# 1. SARRERA
# HIZKUNTZAREN HISTORIAZ

Joakin Gorrotxategi
Iván Igartua
Joseba A. Lakarra

## 1. ATARIKOA

Hizkuntza baten historiak istorio ugari biltzen ditu, halabeharrez. Historia bera kontakizuna da, eta berau hornitzen duten edukiez gainera material horiek antolatzeko erabili diren irizpideek zeresana dute kontaeraren emaitzetan. Edozein historiaren garrantzizko alderdiak dira, hortaz, ez soilik haren barruko osagaiak, baizik eta, horiekin batera, historia bera taxutu eta mamitzerakoan hartutako erabakiak. Datozen lerrootan, esku artean dugun *Euskararen historia* zabal bezain sakon honen nondik norakoak azaltzen saiatuko gara.

Euskalaritzaren eremuan aspaldi zeuden begiz joak bi gabezia nabarmen: euskararen gramatika historiko oso bat falta zitzaigun, alde batetik, eta hizkuntzaren kanpoko historia bat, bestetik. Koldo Mitxelenaren eta haren ondorengoen ekarpenei esker, euskararen bilakabide historikoaren hainbat alderdi, batez ere fonologian eta morfologian, modu egituratu batean argitu eta azaldu dira azken urteetan. Euskararen garapenean hizkuntzaz kanpoko faktoreek izan duten eraginari ere arreta jarri izan zaio, neurri batean zein bestean; baina bi esparru horien tratamendu nolabait osatu edo monografikoaren falta sumatu izan da orain arte.

*Euskararen historia* bi gabezia horiek hein batean behintzat estaltzeko asmoz egina da, batez ere hizkuntzaren kanpoko historiari dagokiona. Hala eta guztiz, eta berehala ikusiko dugun bezala, lan honek euskararen bilakaera gramatikalaren berri ere ematen du, hizkuntzaren aldaketa nagusiak dagokien kanpo-kronologiari lotuz (edonola ere, gramatika historiko bat *sensu stricto* eskaintzea ez da izan lanaren helburua). Horrek ikuspegi zabalago bat eskaintzen die liburuari berari eta liburuaren irakurleari. *Euskararen historia* antolatzerakoan gidari izan ditugun oinarrizko ideiak modu labur eta oso egokian adierazita daude Ramón Menéndez Pidalen ondorengo hitzetan, Rafael

Lapesaren *Historia de la lengua española* lanari egin zion hitzaurreari dagozkionetan: «[e]l plan que el señor Lapesa adopta es sencillo y claro, además de ser convenientemente comprensivo. Toma como hilo conductor la historia externa del idioma español, y simultáneamente, a través de ella, expone la evolución interna gramatical y léxica». *Euskararen historia* honetan ere kanpoko historiaren ildopean hizkuntzak pairatu izan dituen aldaketa nagusiak aztertzen dira, laburki bada ere.

Lan honen nolakotasuna hobeto azaltzeko bidean, dena den, ezinbestekotzat jotzen dugu argitzea oinarrizko kontzeptu zenbaiten irismena. Hizkuntzen kanpoko eta barruko historiaren arteko bereizkuntza XIX. mendetik dator. Hizkuntzalaritzaren historian zaharra ez izanagatik ere, badu tradizio apur bat, batez ere hizkuntzalaritza erromanikoan eta haren inguruan. Hizkuntza baten kanpoko historiaz jardutean hizkuntza horren bilakabidearen marko historikoaz ari gara oro har, hiztun-komunitatearen bizitzan eta haren lurraldean eragina izan duten edo izan zezaketen faktoreetatik abiatuta. Kontaera mota horretan historia politikoa, sozio-ekonomikoa nahiz kulturala elkartzen dira, eta hizkuntzatik izatez urrun dauden osagai horiek hizkuntzak nola barneratu dituen eta horrek hizkuntzaren gauzatze-prozesuaren maila guztietan zernolako aldaketak eragin dituen aztertzea da kanpoko historiaren helburu nagusia.[1] Abiapuntuko ikuspegia da kanpoko historia eta barrukoa bereizten dituena, baina kanpoko historiaren ekarria sakon aztertzen den unetik aurrera ezinbestekoa da hizkuntzaren barruko historiara jauzi egitea, lexikotik haratago (batez ere ukipen egoeran izan diren hizkuntzez ari bagara). Arestian Menéndez Pidalen hitzak aipatu ditugun moduan, aipa ditzagun orain Lapesaren beste batzuk, ezin argiago adierazten baitute horiek ere bi ikuspegien arteko lotura maizenik askaezina: «Me he esforzado en presentar la indisoluble interpenetración de la historia externa de la lengua con su historia interna, con sus cambios de formas y estructuras, encuadrando la creación y evolución lingüísticas en el marco de la historia general, que muchas veces descubre la causa que las genera o el sentido que las

1. Horixe da hizkuntzaren (kanpoko) historiaren adierarik hedatuena, Yakov Malkielen definizio orokorretik abiatzen dena (Y. Malkiel, «Language history and historical linguistics», *Romance Philology* 7 (1953-54), 65-76 or.). Honela laburbiltzen du Malkielen proposamena Pierre Swiggersek: «[d]ans son acception la plus commune, elle [l'histoire de la langue] englobe l'histoire du système linguistique et l'histoire de la réalisation (élaboration, diffusion, contact avec d'autres langues) de ce système dans son contexte socio-culturel, institutionnel, politique, économique et géographique» (P. Swiggers, «Histoire des langues romanes et linguistique historique comparée», in G. Ernst, M.-D. Gleßgen, Chr. Schmitt & W. Schweickard (arg.), *Romanische Sprachgeschichte / Histoire linguistique de la Romania*, 1. liburukia, Berlin-New York, Walter de Gruyter, 2003, 53-54 or.). Kanpoko historia definizio orokor horren bigarren zatiarekin lotuko genuke, hizkuntzaren hainbat mailatako gauzatze eta garapenari dagokionarekin, hain zuzen.

encamina». Koldo Mitxelenak *Sobre el pasado de la lengua vasca* lanean (1964, 71-72 or.) iradoki zuen bezala, kanpoko historiaren eta barruko historiaren artean bereizketa egiten badugu ere, horrek ez du esan nahi biak guztiz banandu ditzakegunik. Are gehiago, hizkuntzaren historia integral batek, ikuspegi filologiko-gramatikal batetik abiatzen bada behintzat,[2] alderdi biak jorratu behar dituelakoan gaude, izaera bateko zein besteko osagaiak uztartzea beti erraza ez den arren.

## 2. AURREKARIAK

Euskararen historia kontatzeko saio zenbait izan dira iragan hurbilean. Baina horiek aurkeztu aurretik beharrezkoa da lehenagoko lan batzuei aipamena egitea: izan ere, Koldo Mitxelenaren ardura nagusietako bat izan ez bazen ere, euskararen kanpoko historiaren alderdi batzuk ukitu zituen idazlan labur zenbaitetan.[3] Aipagarriak dira, besteak beste, *Sobre el pasado de la lengua vasca* (1964) laneko «Historia y prehistoria de la lengua» atala, *La lengua vasca* (1977 [1969]) liburuxkan han-hemenka emandako zertzelada historikoak, edota entziklopedia ezberdinendako idatzi zituen aurkezpen laburrak (esaterako «The Basque language», *Encyclopaedia Britannica*-n agertu zena 1974an, edo «Vascuence» sarrera, *Nueva Enciclopedia Larousse*-n 1982an argitaratua). Ezin esan, hala ere, euskararen historiak tratamendu monografikorik jaso zuenik Mitxelenaren obra handian.

xx. mendeko laurogeigarren hamarkadan mugarri izan zen María Teresa Echeniqueren *Historia lingüística vasco-románica* liburua (Madril, Paraninfo, 1987). Euskara eta inguruko erromantzeen arteko ukipen egoera ardatz harturik, hizkuntzaren kanpoko eta barruko historiari buruzko hainbat alderdi landu zituen, garaian garaiko aldaketa nagusiak multzo kronologikoetan emanez. Ondoren, Joseba Intxaustik kanpoko historia bat, gizarte-historiatik asko zuena, eskaini zuen *Euskara, euskaldunon hizkuntza* liburuan

---

2. Horrela izendatzen du («conception philologico-grammairienne») Pierre Swiggersek kanpoko eta barruko historia konbinatzen dituzten lanen ikuspegia. Horren ondoan ikuspegi idealista, literarioa («scripturaire»), tipologiko-estrukturala, soziologikoa eta sozio-politikoa ere bereiz daitezke. Egilearen aburuz, korronte filologiko-gramatikalaren barruan daude, besteak beste, W. Von Wartburgen *Évolution et structure de la langue française* (Bern, 1934), A. Rosettiren *Historia limbii române* (Bucuresti, 1964[4]), R. Lapesaren *Historia de la lengua española* (1981[9]); ik. P. Swiggers, «Autour du concept d'histoire de la langue: le français et les autres langues romanes», in J. Suso eta R. López (arg.), *Le français face aux défis actuels. Histoire, langue et culture*, Granada, Apfue-Gilec, 2004, 279-280 or.

3. Testu honen mugak direla eta aipatu gabe utzi behar ditugu Mitxelenaren garaiaren aurretiko zenbait lan, euskararen historiaren inguruko ideia eta hausnarketan eragin nabaria izan zutenak (adibide gisa, Justo Mokoroa 'Ibar'-en *Genio y lengua* (1935) saiakera ekar daiteke gogora).

(Gasteiz, Eusko Jaurlaritza, 1990). Koldo Zuazok aurkezpen labur eta trinko bat egin zuen 1995ean, José Ignacio Hualdek, Joseba A. Lakarrak eta Robert L. Traskek argitara emandako *Towards a history of the Basque language* (Amsterdam eta Philadelphia, John Benjamins) liburuan. Izenburuan bertan egileak era esplizitu batean adierazi zuen artikuluaren xedea: «The Basque country and the Basque language: An overview of the external history of the Basque language» (5-30 or.). Handik gutxira, bere *The history of Basque* (London, Routledge, 1997) lan ezagunean Robert L. Traskek kanpoko historiari eskaini zizkion liburuaren hasierako orrialdeak (80 bat), nahiz eta «An external history of the language» izeneko atalak 15 orrialde bakarrik hartzen dituen. Nafarroako euskararen bilakabidera mugatua badago ere, José María Jimeno Juríoren *Navarra: Historia del euskera* (Tafalla, Txalaparta, 1997) lanak toki berezia du ikuspegi historikoaren garapenean. 2003an argitara emandako *El euskera arcaico* (Tafalla, Txalaparta) liburuan Luis Núñez Astrainek hizkuntzaren kanpo-kronologia bat eskaini zuen, euskara arkaikoaren garaira mugatzen ez dena («Breve historia del euskera», 31-68 or.). Ondoren iritsi zen Iván Igartua eta Xabier Zabaltzaren *Euskararen historia laburra* (Donostia, Etxepare Institutua, 2012) izeneko argitalpena, hiru hizkuntzatan kaleratua (euskaraz, gaztelaniaz eta ingelesez; 2016an frantsesezko bertsioa gehitu zaie) eta atzerriko irakurlea duena helburu nagusi (ez bakarra, ordea). Liburuxka horren zatirik handiena euskararen kanpoko historiari eskaintzen zaio. Azkenik, Mikel Martínez Aretak 2013 koordinatutako liburuan (*Basque and Proto-Basque*, Frankfurt am Main, Peter Lang), Koldo Ulibarrik euskararen kanpoko historiari «External history. Sources for historical research» (89-117 or.) eskaini zion atal berezi bat. Gainerakoan, liburuak euskararen gramatika historikoa du aztergai nagusi.

### 3. *EUSKARAREN HISTORIA*REN EGITURA

Helburuetan, neurrietan eta are edukietan ere *Euskararen historia* honek ezer gutxi du komunean aipatu aurrekari gehienekin. Erreferentziazko historia bat egin nahi izan dugu, inguruko hizkuntzetarako daudenen parekoa behintzat izaeraren eta oinarri teoriko-metodologikoen aldetik (urrunegi joan gabe ere, eta ezinbesteko ereduen artean, eskura ditugu Ramón Ménendez Pidal eta Rafael Lapesaren lanak espainieraren historiarako, eta horiekin batera Rafael Cano Aguilarrek koordinaturiko liburua, Bruno Migliorinirena italieraren historiarako, Geoffrey Horrocksena grezieraren historiarako, Ian Pressena errusieraren historiarako, eta, tamainaz alde handia erakusten badu ere, baita Ferdinand Brunotena frantsesaren historiarako[4]. Euskararen bilakabide historikoan

4. Hona erreferentzia osoak: R. Menéndez Pidal, *Historia de la lengua española*, 2 liburuki, Madril, Marcial Pons, 2005; R. Lapesa, *Historia de la lengua española*, 9. arg., Madril, Gredos, 1981;

eragina izan duten faktore nagusiak bildu nahi izan ditugu liburura, nahiz eta, garaiaren arabera, faktore horien egungo gure ezagutzan gorabehera esanguratsu eta aldi berean saihestezinak dauden. Hala eta guztiz, lanari beharrezko batasuna emate aldera, garai bakoitzean landu beharreko oinarrizko gaien inguruan barne-koherentzia bat ezarri zen hasieratik, hizkuntzaren garapenaren aldien arteko konparaketa ere errazteko, bide batez. Horrela, liburuaren atal bakoitzaren hasieran sarrera historiko orokor bat aurkituko du irakurleak, hizkuntzaren bilakaera prozesu historiko zabalean kokatzen laguntzen duena. Gero, euskarak garai bakoitzean izan duen hedadura geografikoaren inguruko datuak aztertzen dira. Hirugarren puntu nagusia lekukotasunei dagokie: euskararen historia egiteko balia ditzakegun datu linguistikoak zein diren eta nola erabil daitezkeen azaltzen da atal bakoitzean eta, ondoren, datu horien azterketa grafiko, fonologiko eta morfosintaktiko laburtuak eskaintzen dira. Lekukotasunak aztertu eta haiek dakarten informazioa argitu eta gero, euskararen eta inguruko hizkuntzen arteko harremanen berri ematen da: euskarak historian zehar beste hizkuntza horiekin izan dituen ukipen egoera ezberdinek oso era sakonean baldintzatu dute hizkuntzaren beraren historia. Horrekin loturik dago, noski, maileguen azterketa. Azkenik, atal gehientsuenetan, hizkuntza-ideiei eta garaian garaiko gramatikako lanei buruzko argibideak eman dira.

Lanaren egitura komun horrek salbuespenak ditu, ezinbestean. Edo salbuespenak bainoago, garai jakin batzuei dagozkien berezitasunak. Aipatu berri ditugun gai zenbait, esaterako, ezin dira jorratu aurrehistoriari edo antzinateari buruzko ataletan. Daturik ezak azaltzen du zuzenean ezintasun hori. Historiaurreari dagokionez, lekukotasunik ez izatearen gabezia hizkuntzalaritza historikoaren eskutik datozen metodoek konpentsatu dezakete, neurri batean bederen. Horregatik, atal horretan aitzineuskara nolakoa izan zitekeen erakusten da, konparaketaren eta barne-birreraiketaren lanabesetan oinarriturik. Bestalde, atal berezi horietan bestelako gai batzuk lantzen dira: historiaurreari berriro

---

R. Cano Aguilar (arg.), *Historia del español*, Barcelona, Ariel, 2004; B. Migliorini, *Storia della lingua italiana*, Firenze, Sansoni, 1987; G. Horrocks, *A history of the Greek language and its speakers*, Londres, Longman, 1997; I. Press, *A history of the Russian language and its speakers*, München, Lincom, 2007; F. Brunot, *Histoire de la langue française des origines à 1900*, Paris, Colin, 1905-1938 (13 liburuki nagusi). Ingelesaren historia ikergaitzat duten monografiak asko dira: batzuk baino ez aipatzearren, guztiak izenburu berarekin, ik. A. Baugh eta T. Cable, *A history of the English language*, Londres, Routledge, 1993 (4. argitaraldia, 1.a 1951koa da), R. Hogg eta D. Denison, *A history of the English language*, Cambridge, Cambridge University Press, 2006, edo E. Van Gelderen, *A history of the English language*, Amsterdam-Philadelphia, John Benjamins, 2006. Liburuen izenburuei dagokienez aipagarria da G. Horrocksek eta I. Pressek darabiltena, hizkuntzaz gain hiztunak nabarmentzen baitituzte, aurkezpenen alderdi soziolinguistikoa azpimarratuz. Ik. baita Baughek eta Cablek aipatu lanean diotena (1. or.): «[t]he history of a language is intimately bound up with the history of the peoples who speak it».

helduz, hor kokatu dugu, adibidez, euskararen jatorriari eta ahaidetasunari buruzko hipotesien azterketa.

Garai berriagotara jotzen badugu, aldiz, berezitasunak beste tankera batekoak dira. XVIII. mendetik aurrera, euskararen historian berebiziko garrantzia hartzen du literatura-hizkeren garapenak. Hortaz, egokia zen —eta ere ezinbestekoa ere— garai modernoei dagozkien kapituluetan literatura-hizkeren gaineko azpi-atalak sartzea. Azken kapituluak, bestalde, badu bere izaera eta egitura erabat baldintzatzen dituen beste berezitasun bat, euskararen batasun-prozesuak dakarrena, hain zuzen. Izan ere, atal hori 1968tik aurrera garatutako batasunaren prozesuaren inguruan antolatua dago ia osorik. Hizkuntzaren estatusa eta corpusaren gaineko argibideek osatzen dute azken kapitulu horren muina.

Garaian garaiko berezitasun guztiak kontuan izanik ere, *Euskararen historia* honen abiaburuko planteamenduan nahiz lanaren emaitzetan garbi islatu nahi izan dugu ukitu behar ziren gaien arteko ezinbesteko oreka. Historiaren errelatoak gutxieneko batasun hori behar du betiere, hizkuntzaren bikaeraren faseen arteko konparagarritasuna bermatuko badugu behintzat.

## 4. ZATIKETA KRONOLOGIKOAK

Honelako lan batean nahitaezkoa da, besteak beste, garaien arteko zatiketa kronologiko bat proposatu eta horretan oinarritzea. Ariketa horri *periodizazioa* deitu ohi zaio, eta beti izaten du arbitrarietate punturen bat, eztabaidarako pizgarri izaten dena, noizean behin edo usu. Garaiak, hizkuntzaren garapenaren fase ezberdin horiek, ez baitira bereizten —normalean ezinezkoa delako— hizkuntzaren barne-bilakabidearen oinarrian: hau da, faseak ezartzerakoan, datu linguistiko hutsak ez dira erabakigarriak izaten, beti ez da egoten ezaugarri fonologikoen edo gramatikalen multzo jakinik garaien arteko bereizkuntzaren atzean. Beraz, hizkuntzaren gramatikaz kanpoko elementuek erabakitzen dituzte nagusiki, eta salbuespenak salbuespen, muga kronologikoak (hor irekitzen da, hain zuzen, iritzi ezberdinak plazaratzeko aukera). Pierre Swiggersen hitzetan, historiaren «périodisation extrinsèque» deritzona litzateke hizkuntzaren garapenari markoa ezartzen diona.[5]

Edonola ere, *Euskararen historia* honetan onarpen handia duen periodizazioa erabili da: historiaurrea da lehen atala, hots, lehen idatzizko testigantzen aurreko garai luzea; bigarrena antzinateari dagokio, eta erromatarren etorreraren aurretik eta ondoren hitz egiten ziren euskarak ditu aztergai nagusi; Erdi Aroak edo Erdi Aroko euskarak osatzen du hirugarren kapitulua, 711tik 1400. urtera bitarteko bilakaera aztertzen duena; laugarrenari euskara

---

5. P. Swiggers, «Autour du concept d'histoire de la langue: le français et les autres langues romanes», 284 or.).

arkaikoa deitu diogu, eta 1400etik 1600 bitarteko lekukotasunei eskaini zaie; euskara zahar eta klasikoak 1600etik 1745 arteko eboluzioa argitzen du; ondoren datoz «lehen euskara modernoa», 1745etik 1876ra bitarte, eta «bigarren euskara modernoa», 1876tik 1968 bitarteko garaia islatzen duena; azkenik, euskara garaikidea dugu, euskararen batasunaren bideetan oinarritua, 1968an hasi eta gaur egun bukatzen dena.

Muga kronologiko zehatz horiek hizkuntzaren historiaz kanpoko mugarriak dira kasu gehienetan: 711ko urteak arabiarren etorrera seinalatzen du, 1745ko data Larramendiren *Hiztegi hirukoitz*aren argitalpenarekin lotzen da, 1876a Foruen ezeztatzearen urte esanguratsutzat jo izan da historiografian (*Pizkunde*aren hasiera une horrekin lotu ohi da) eta 1968an garai berrietako euskararen batasun-prozesua jarri zen abian era ofizialean. Mugarri horiek, eta beste batzuek, hizkuntzaren garaian garaiko garapenaren marko historiko-kulturala ezartzen dute, eta konbentzioz definitzen dituzte, analisiaren ikuspegitik, hizkuntzaren bilakabidearen faseak. Horrek ez du esan nahi zatiketaren atzean inolako arrazoi linguistikorik ez dagoenik, batez ere garai luzeenen arteko bereizkuntzari dagokionez, hizkuntzaren bilakaeran pisuzko aldaketak metatzen baitira halakoetan, baina urte zehatzak jotzen direnean garaien arteko mugatzat ezin baiezta daiteke, hizkuntzaren barruko dinamikari erreparatuta, hain zuzen orduan —eta ez beste urteren batean— gertatu zela garaien arteko aldaketa. Konbentzioa, edo balizko iritzi ezberdinen arteko hitzarmena, une horretan nagusitzen da, hizkuntzaren garapenean neurri bateko zein besteko eragina izan duten gertakariak nabarmentzeko orduan.

## 5. EGILETZA

*Euskararen historia* hau talde-lanaren emaitza da. Hizkuntzaren garapen-fase bakoitzean adituak diren ikertzaileak izan diren talde horren partaide, eta egungo ezagutza, izan daitezkeen hutsuneak ezkutatu gabe, modu ordenatu eta betiere sintetikoan ematen asmatu dute. Hizkuntzalariez eta filologoez gain, taldera historialariak ere bildu ditugu, liburuaren atal gehienen hasiera hornitzen duten sarrera historiko orokorrak modu egokian eman ahal izateko. Lerro hauen bitartez esker ona adierazi nahi diegu Mikel Aizpuru, Juan José Larrea eta Xabier Zabaltzari beren lankidetzagatik eta *Euskararen historia* burutzeko egindako ekarpenagatik.

Gatozen orain atal bakoitzaren zertzelada nagusi batzuk ematera. Historiaurrearen garai luze eta ez beti argia Joseba A. Lakarrak ikertu eta landu du: euskara munduko beste hizkuntza batzuekin lotu nahi izan duten hipotesi jorratuenak aztertu eta baztertzearekin bat, egileak aitzineuskararen egituraz egin diren proposamenak —dagoeneko klasiko bilakatu direnak (André Martinet, Koldo Mitxelena) eta, horien ondoan, berriagoak—

azaltzen ditu. Horrez gain, euskalkien jatorriari buruzko adarkatze-proposamen berri bat ere mahaigaineratzen du, ikuspegi tradizionalarekin bat ez datorrena.

Antzinatearen historia Joakin Gorrotxategik kontatu du. Atal horren barruan toki nagusia hartzen dute Akitaniako inskripzioek (K. o. I-III. mendeak), euskararekin ederki lot daitezkeen lehen lekukotasunak baitira (cf. Robert L. Trask, *The history of Basque*, London, Routledge, 1997, 411. or.: «probably all Basque scholars now accept that Basque descended more or less directly from Aquitanian»). Horien analisiak, eta antzinatean euskarak inguruan zeuzkan hizkuntzekin izandako harremanen azterketak, orduko hizkuntza-egoeraren argazkia ematen digute.

Erdi Aroko euskara Patxi Salaberrik aztertu du, tamaina bateko lehen lekukotasun sendoen aurkezpena eginez. Grafien eta fonologiaren azterketa sakon bat ematen digu egileak, garaiko grafia sistemaren ezaugarriak eta zailtasunak argitzen laguntzen duena. Erdi Aroan hizkuntzaren morfosintaxiaz zer edo zer esaten ahal diguten egiturak dauzkagu, aurreko garaietan ez bezala, sintagmen luzerak eta egitura mugatuek ikerketa dezente baldintzatzen duten arren. Donemiliagako glosak daude, alde batetik, nafar otoitza eta foruak, bestetik. Informazio askorik ez, baina dagoena esanguratsua da, Nafarroako foruan ageri diren *gayçes berme* eta *ones berme* tankerako egiturek ematen digutena, esaterako (hurrenez hurren, auzi jartzailearen eta akusatuaren bermeak edo). Mitxelenari jarraituz, hego-nafarreran hedatu zen *-s* instrumental marka aldaera horren lehen lekukotasuna litzateke. Hiztegiari dagokionez, Erdi Aroko euskal hitzetako batzuk Aymeric Picaud erromesak *Codex Calixtinus* (XII. mendea) delakoan jaso zituenak dira.

Euskara Arkaikoa (1400-1600) Céline Mounolek eta Joseba Lakarrak aztertu dute. Garai hau da —Europako beste zenbait hizkuntzatan bezala— benetako testu-corpusa duen lehena, are ohiko 1545ko data baino mende eta erdi lehenagotik ahozko poesiari eta errefruei eskerrak. Aurreko hainbat mendetan batez ere fonetikazko berri interesgarriak eskuratu arren, orain dugu hizkuntza-egoera bat bere osotasunean (aditz eta izen morfologia, sintagma eta esaldi mailako sintaxia eta semantika) aztertzeko eta gainerako garaietakoekin erkatzeko moduan.

Arrazoi objektiboengatik (gordetzen duten hizkuntza-informazioagatik) nahiz era ezberdinetako arrazoi historiografikoengatik (egiletasunaren, daten, jatorrien, originalen eta originaltasunaren eta enparatuen inguruko arazoak direla bide), berebiziko garrantzia —eta azterketa berri anitzen beharra— dute hemen aztertu Etxeparek, Leizarragak, *Refranes y Sentencias*-ek (1596), gainerako errefrau bildumek, balada eta eresiek eta, nola ez, Landuchioren hiztegiak eta Lazarragaren eskuizkribuak. Horregatik eskaini diete egileek lekukotasunei gainerako ataletan baino arreta handiagoa, horiek txukun miatu eta pisatu gabe oinarri ahulagoak baikenituzke hurrengo mendeetan euskarak izan eboluzioaz ohartzeko eta baita hizkuntzaren historiaurrea berreraikitzeko ere.

Diakronistak eta hizkuntzaren historiaz arduratuak ezagutu beharreko zailtasunei (dialektoen arteko asimetriei, esaterako, eta, batez ere, Leizarragak egin Calvinoren itzulpen hertsi erraldoiak sortuei) eta azken urteotako hainbat filologia-ekarpeni egin diete leku egileek. Grafiatik hasi eta fonologia, morfosintaxia eta lexikoa aztertu dituzte berariaz garaiko euskararen egitura eta eboluzioaren ikuspegi egokiago baten bila. Hala ere, testuinguru zabalago batean —hizkuntzaren barneko eta kanpoko historien arteko loturak ulertzeko, inprimategiaren, humanismoaren eta erlijio gerlen garaiko Europan gertatzen ari zen hizkuntza iraultzaren barnean kokatu dute euskara arkaikoa.

Euskara klasikoari dagokionez, mugak 1600 eta 1745 bitarte ezarri dira, arestian aipatu bezala. Céline Mounolek eta Ricardo Gómezek aztertu dute garai hori. Lekukotasunen ugaltzearekin gero eta handiagoa (eta beharrezkoagoa) da sintesi-lana, eta egileek ongi finkatu behar izan dituzte beren lehentasunak. Atal honetan, euskararen lekukotasunen kopuruak zehazten dira (155 unitate, horietarik 13 galduak, baina erreferentziaren bat utzi dutenak). Ugaltze horri esker, gero eta gehiago dira gramatikari buruz jaso ditzakegun datuak eta, horrela, hitz-formen arteko lotura diakronikoak egiteko oinarri sendoa erdiesten da. Atalean, adibidez, genitibozko edo ablatibozko forma zaharrak aztertzen dira, aditzaren forma ugariak, zaharrak zein berriagoak, edota pixkanaka gutxituz edo desagertuz doazenak (geroaldiko forma sintetikoak, *eztacusque* edo *datorquen* modukoak, esaterako). Hizkuntza-ideiek ere presentzia ohargarria dute garai honetan (Oihenart), eta lanean luze-zabal jasotzen dira. Lekukotasunez aparte, galdutako lanen erreferentziak ere aurkituko ditugu: Dominique Bidegarairen hiztegi hirukoitza (gero laukoitza ere izan nahi zuena), adibidez, edota Jakes Bela edo Etxeberri Sarakoaren gramatika-lanak.

Lehen euskara modernoaren azterketa (1745-1876) Blanca Urgellen eskutik heldu zaigu. Atalaren muinean Manuel Larramendiren obra dago, Larramendiren itzala itzela izan baitzen euskal gramatikagintzan, lexikoan eta hiztegigintzan, hizkuntza ideien garapenean edota literatura-hizkuntzaren bilakaeran. Hortaz, Larramendiren ekarriaren analisiak eta oinordetzan utzi zuenaren deskribapenak atal honen zati handi bat hartzen du. Baina, horrekin batera, dena den, kapitulu zabal honek, aurrekoek bezala, hizkuntzaren bilakaerarekin zerikusi zuzen edo zeharkakoa izan zuten gai guztiak ukitzen ditu, zehaztasunez ukitu ere: garaiko bilakaera sozial eta politikoa, euskararen mugen aldaketak, testuen ugaltzea, euskararen jazarpena (hainbat lekutan haren erabilera oztopatu edo debekatzeko hartu ziren neurriak), baita gizartearen zati baten hizkuntzarekiko utzikeria, literatura-hizkuntzaren bilakabiderako ezinbestekoak ziren moldiztegien garapena eta, horien gainetik, jakina, lekukotasunen analisi linguistikoa. Aurreko atalean sintesi-lanak ahalegin berezia eskatu badie egileei, zer esanik ez kapitulu honi eta hurrengoei dagokienez.

Bigarren euskara modernoa (1876-1968) aztertzearen lana Iñaki Caminok hartu du bere gain. *Euskal Pizkunde*aren garaian hasi eta 1968ko Arantzazuko biltzarrera iristen den atal honetan garrantzi handiagoa hartzen dute hizkuntzari buruzko ideiek eta gramatikaren deskribapenek. Hizkuntzaren erregulartasunaren eta garbitasunaren inguruko eztabaidak piztu ziren garai haren hasieran, gero eta ondorio politiko gardenagoekin. Eta horren guztiaren berri ematen digu egileak ongi egituratutako narrazio baten bidez. Garai hartakoak dira, halaber, hizkuntzaren batasuneranzko lehen urratsak. Euskaltzaindia 1919an sortu zen, eta, handik urte batzuetara, berrogeita hamarreko hamarkadaren bukaeran, hizkuntzaren batasunari buruzko lehen gogoeta serioak plazaratu ziren (Txillardegiren eskutik), Baionan 1965ean egindako biltzarrean isla izan zutenak (ik. orain Ibon Sarasola, *Bitakora kaiera*, Donostia, Erein, 2016, 18. or). Bigarren euskara modernoari buruzko atalak, gainera, literatura-hizkeren azterketa sakona eskaintzen digu, maila linguistiko guztietan.

Euskara garaikidea, azkenik, Pello Salaburuk landu eta aurkeztu du. Kapitulu honen muina batasunaren prozesua bera da, hastapenetatik gaurko egunera. Egileak zehaztasun maila handiz kontatzen ditu prozesuaren urratsak: biltzarretan (Arantzazu, Bergara) aurkeztu ziren txostenen edukiak eta garatu ziren eztabaidak, ikusmolde ezberdinen gorabeherak, gai linguistikoek pizten zituzten pasioak, etab. (gogora bedi, esaterako, Justo Mokoroaren 1968ko lan baten izenburua: *Batasunari buruz agurka eta beste batzuk aurka*). Argigarria da, alde horretatik, *h* letraren inguruan izan zen eztabaida bizi eta ia bukaezina (euskal alfabetoan egon behar zuen ala ez, egotekotan zergatik, zein zen euskara batuaren oinarrian egon behar zuen eredua, etab.). Esan dezagun bidenabar euskararen historia osoan *h*-ak (grafema eta fonema gisa) beste bi garai edo lekutan hartzen duela horrenbesterainoko garrantzia, historiaurreko berreraiketetan, batetik, eta Erdi Aroko dokumentazioa aztertzen denean, bestetik (batez ere Donemiliagako 1025eko dokumentu ezagunean). Euskara batuaren sorrera eta garapenaz gain, beste gai batzuk landu dira atal honetan, garai berrietarako inportanteak direnak: hizkuntza politika eta hizkuntza plangintzarekin loturiko gaiak, esaterako, edota egoera soziolinguistikoa ezagutzeko gaur egun dauzkagun tresnek ematen diguten informazioa. Izan ere, 1991an hasi ziren euskararen datu soziolinguistikoak modu sistematikoan biltzen, eta dagoeneko sei inkesta burutu dira (2016ra arte), hogei urtean euskararen jakintzak eta erabilerak izan duten eboluzioa ikusi eta aztertzeko baliagarriak izan direnak.

## 6. HELBURUA

Liburuaren xede nagusia euskararen historiaren gaineko oinarrizko erreferentzia bilakatzea da. Euskarari buruzko informazio historikoa era monografikoan biltzea premia bat zen euskalaritzan, ikuspegi ezberdinetatik: euskal ikasketetako ikasleek euskararen historiari buruz orain arte metatutako ezagutzaren oinarrizko aurkezpen bat behar zuten; ikertzaileak ere hizkuntzaren bilakabidearen marko orokorraren eta garaian garaiko aldaketen berri emango zuen sintesia noiz eskuratu zain zeuden; eta euskaran interesik lukeen edonori haren historia laburbildu eta modu ordenatu eta ahalik erakargarrienean aurkeztuko zuen liburu bat eskura izatea mesedegarri baizik ez zitzaion suertatuko.

Arrazoi ugari zeuden, beraz, horrelako lan bati ekiteko. Euskal filologiak eta hizkuntzalaritzak azken mende erdian lortu duten heldutasunak ekimen honek esperoko emaitzak ekar zitzakeelako bermea ematen zuen. Lortutakoa, gainera, hainbat ikertzaileren ahalegin partekatuei zor zaie: elkarlan sakonean eraikitako emaitza da, beraz, esku artean duguna.

Orain, denborak eta inguruneak jar diezaioketen probarik zailena du liburuak aurrean: irakurleen iritzia. Alferrik da edozein ahalegin, liburu hau erabiliko dutenen itxaropenak ez badira betetzen. Hor dago, beraz, gakoa, irakurle: zuretzako egina da lana, eta hemendik aurrera zurea izango da hitza.

2.

# EUSKARAREN HISTORIAURREA

Joseba A. Lakarra

*Bisi Andrinua*
*eta Andres Lakarra-ari*

> *One must not mix up isolated languages* (which do have data) *with non-classified languages* (which lack data). We have done good progress in looking for relatives of Basque and of other isolated languages, since we have proved that many hypotheses about distant relationships cannot be supported by the evidence and we know much more about the methods necessary to demonstrate a genetic relationship between languages. Despite the doubts about the possibility of discovering historical facts about isolated languages, there exist several resources that can help to recover quite a lot of historical information about these languages: internal reconstruction, philological research of testimonies, comparative reconstruction based on dialects, evidence of loanwords, historical facts happened in the contact between languages and studied by areal linguistics, and the strategies of Wörter und Sachen. *The study of the history of Basque can be an example to the study of other isolated languages* (Campbell 2011: laburpena; etzanak neureak [J. A. L.]).
>
> If we dismiss every case of polysemy as accidental we deprive ourselves of the possibility of ever finding out whether the two functions are in fact related or not. If, in contrast, we try to discover a relationship, in the worst case we may find that none exists. But in an optimal case we may find out that a connection exists, and the explanation of this connection may shed some light on the nature of language structure and of language change (Frajzyngier 1986: 233).

## 1. SARRERA*

### 1.1. Hizkuntza aldakortasunaz

Ipuin zabaldua da euskarak 7.000 urte edo dituela (zergatik ez 17.000 edo 70.000?) gure inguruko hizkuntzek eta are urrutixeagokoek gehienez ere 1.000 edo 1.500 baino

* Lan hau EJ-ko «Lingüística histórica e historia de la lengua vasca» [GIC.IT486-10], Madrilgo Ministeritzako «Monumenta Linguae Vasconum (III)» [= FFI2008-04516], «MLV IV» [= FFI2012-37696] eta «MLV V» [= FFI2016-76032-P], eta UPV/EHU-ko UFI11/14 ikerketa talde eta egitasmoei lotua da.

ez omen dituztelarik (afrikanerrak ezta 500 ere). Bistan denez, ikuspegi hau ez da nominalismo hutsa baizik: gainerakoen kasuan hainbat deitura —*gaztelania/frantses modernoa, gazt./fr.zah., aitzin-erromantzea, latin arrunta, lat.klasikoa, lat.zah., italikoa, indoeuropera* eta, agian, gehiago— ditugun bitartean, bat baino ez dukegu gurearentzat (*euskara*) eta hau edozertarako erabiliaz inguruko eta urrutiagoko hizkuntzen izenik berrienen datak baino zaharragoak ere adierazteko balioko omen luke. Kontuak aldatu egiten dira egun Baionan, Donostian zein Iruñean hitzegiten diren hizkuntza nagusiak IEren hizkera moderno zenbait direla ohartzean, eta IEk ere —hots, hiri horietan bezala New York, Vladivostok, Johannesburgo eta Reykjavik hitz egiten den hizkuntzak— 5 edo, optimistagoen ustez, 7 eta are 9 mila urte beteak dituela; gainetik, gure aldean ere, *euskara* (gehi *heuskara, euskera, uskara*…)[1] horren alboan badira —Euskal Filologia eta euskararen historiaren ezagutza aitzinatu ahala—, esanahiaren adiera zehatzagoak hartzen dituzten beste berba batzuk (*Euskara Modernoa, Euskara Klasikoa, Euskara.*

---

*Laburdurak*: AE = aitzineuskara, EBZ = Euskara Batu Zaharra; IE = indoeuropar/-era; R = ozen; S = txistukari; T = herskari; V = bokala; atalen batean (batez ere 5.ean) bertako laburdura berezi eta ezagunak dira. *Euskal dialektoentzako laburdurak* (beste zenbait gehituko dira § 5en hasieran): A: arabera, Aez: aezkera, B: bizkaiera, EkBN: ekialdeko baxenafarrera, Err: erronkariera, G: gipuzkera, HGN: hegoaldeko goinafarrera, IGN: iparraldeko goinafarrera, L: lapurtera, MBN: mendebaleko baxenafarrera, Z: zuberera, Zar: zaraitzuera.

Hainbat lankide, adiskide eta lagun eskertu behar nuke urte askoan orrialde hauetako —are azken orduan arrazoiren batengatik sartu ez dudan— gairen bat(zuk) nirekin gogoetatzeagatik: I. Camino, L. Campbell, R. Gómez, J. Gorrotxategi, J.I. Hualde, I. Igartua, J. Larrea, M. Martinez, C. Mounole, L. Oñederra, J. Ormazabal eta, bereziki, J. Manterola eta B. Urgell; J.I. Hualdek, bere eskuzabaltasunean ia-ia azken bertsioa osorik arretaz irakurri eta nahiz forman nahiz edukinean, hobekuntza asko proposatu zidan arren, gehienak ezin izan ditut hemen baliatu.

Euskal Filologia Lizentziatura eta Graduko "Euskal Gramatika Historikoa", zein Linguistika Masterreko "Hizkuntzalaritza Historikoa" edo Euskal Linguistika eta Filologiako Masterreko "Diakronia eta Filologiako Oinarriak (I)" ikasgaietako aspaldiko eta oraintsuko ikasleenganako ere (A. Begiristain, A. Egurtzegi, D. Krajewska, A. Odriozola, E. Zuloaga eta enparatuekiko) haiek uste baino zor handiagoa dut, eta eskerrak eman nahi dizkiet, batez ere erantzuten jakin ez ditudan haien galderengatik; B. Ariztimuñori, gainera, lan honen lehendabiziko bertsio baten gaztelaniazko itzulpena eta hari egindako hainbat ohar eta hobekuntza ere zor dizkiot eta D. Krajewskak eta E. Zuloagak azken probetan berebiziko laguntza eman didate. Aipatuek oro (edo ahaztu eta aipatzeke geratu direnek) ez dute inongo errurik testuko akats zein okerrengatik.

1. Alfonso Irigoyenek (1977) erakutsi zuen Garibairen <enusquera> dela hizkuntzaren izenik arkaikoena; beraz, *heuskara*-k *harea*-k, *hazeari*-k, *herio*-k, *haitz*-ek edo *hezur*-ek bezala, *h*-lehenagoko **-h-* batetik du eta hau **-n-* zaharragotik (ik. § 3.5). Horrenbestez, ez *esku*-k ez *Ausci* gentilizioak (*pace* Tovar 1987) du ikustekorik hizkuntzaren izenarekin (ezta *vasco[n]*ek ere, noski) nahiz inoiz horrelako «antzen» gainean eraikitako teoriak izan diren.

_Arkaikoa, Erdi Aroko Euskara, Euskara Batu Zaharra, Euskaroa, Akitaniera, Aitzin-Euskara Modernoa, Aitzin-Euskara Zaharra…_) eta kasuan kasukoa beharko luke erabili erkaketan horretarako gogorik duenak. Hori ere ez bide da aski, berez, ez «izenak» baizik eta «izanak» erkatu beharko baikenituzke: XV. mendeko euskararen aditza eta garai bereko lituanierarena, XVII.eko euskararen fonetika eta orduko txinerarena…

Egingarriagoa da, noski, lurralde jakin batean _x_ hizkuntza edo hizkera beste _y_ baino zaharrago edo berriago ote den erabakitzea: esaterako, Ataunen edo Mendatan euskara erromantzea baino zaharrago —«euskalduntze berantiarraren» (ik. § 5.10) aldeko ez bagara, bederen—; aldiz, erromantzea ingelesa baino lehenagokoa dugu Rio Granderen iparraldeko hainbat tokitan, nahiz ez izan han mintzatu lehen-lehena, noski.

Halaber, bada euskara ez dela aldatu aldarrikatu duenik edota, apalxeago, aldatzekotan gutxi aldatu dela —betiere inguruko eta urrutiagokoak baino gutxiago, bederen—. Hemen ere ustekizun hutsen aurrean gara: ez da hizkuntzen aldaketa neurtzeko balio orokorreko metodo estandarrik —ikusiko denez, lexikoaren esparru ustez errazenean ere ez da horrelakorik erdietsi (ik. § 2.5.1 glotokronologiaz)—; are gehiago, usu hizkuntza berean oso aldaketa mota eta kantitate ezberdinak kausitzen dira garai batetik bestera. Euskararen aditz-sistema 1571tik (Leizarraga) 1643ra (Axular) eraldatu egin da 1643tik 1943ra edo 2013ra baino askoz gehiago (garai berean ingelesean edo frantsesean baino askoz gehiago); fonetikan 72 urte horietan, ordea, euskararen dialekto gehienetan ez da itxuraz ezer larririk aldatzen, nahiz txistukarien neutralizazioa zerbaixka aitzinatuaz joan Bilbo aldean… (ik. 5. kap.). Izan ere, aldaketaren abiada dugu diakronistaren arazo nagusietarik (cf. Janhunen 2008: 223).

Urliak Akitaniako idazkietan diren SENI, NESCATO, CISON —euskara historikoko _sein/sehi, neskato, gizon_-en antz-antzekoak— dakartza euskararen (?) aldaezintasunaren frogatzat. Alabaina, dagoeneko «euskara» hitzaren balioaz esandakoak alde batera utzirik ere, edota Akitaniakoak onomastika direla (ik. 3. kap.) eta ez lexiko arrunta, aipatu hitzok baino 5 edo 10 mende modernoago diren _meridiano, *abaribagakoegun_ edo _*eNala/*eLana_; _biao, bariku_ eta _enara/elai_ bilakatuak dira, hurrenez hurren. Beste kasu batzuetan, hainbat aldatu dira —mailegu nahiz ondare zaharreko— non beren jatorrien aztarnak ere ia galduak ditugun.

Hori gertatzen zen oraintsu arte _samin_ edo _hezur_-ekin: lehenengoaren eraketaren zantzua lor genezake _sabel (*sa-bel)_ eta _min_ kideak gogoratuaz eta _hezur_-entzat (Mitxelenarentzat _*ena-/*anezur_) _*b- > ø-_ gehi dardarkari disimilazioaren batean eta _-b/d/g- > -ø-_ bitartez, bestean, _*berna-zur_-era eraman dezakegu: cf. _*borgeni > hogei, *bortz-egun > ostegun_ eta goiko _*abaribagakoegun > bariku_, cf. _*borgeni_ '(lit.) '5 +' (15etik) > _hogei_ '20', _*bortz-egun_ ('5.a', igandea 1.kotzat hartuaz) > _ortzegun/ostegun. *Ernazur > *enazur_-en _*hertz-bu(n)-ger_ 'alde'/'esku gaizto' > _ezker_-eko _r_-disimilazio bera

dugu; ez, aldiz, **hertz-bu(n)* > *esku*-n eta **hertz-bu(n)-on(e)* > *eskuin* 'alde'/'esku on'-en (*-r* gabe) eta hortik hauetako *rz* > *s,* erregela hori duten dialektoetan.

**1.2. Hizkuntzen historiaurrea eta euskararena**

Sortzez, hizkuntzalaritza historikoa da, ekonomia, geologia eta XIX. mendean sortu hainbat ikerketa-eremu bezala: batez ere IE familia eta honen azpi-familiak (erromanikoa, germanikoa, zeltikoa, eslabikoa…) izan ziren hizkuntzalarien aztergai hasieran; berehalakoan (betiere ikuspegi diakronikotik) erantsi zitzaizkien semitikoa, maya, austronesiera, bantua eta beste hainbat, IE bera baino lehenago ezagutu uralikoaz gainera. Europan hizkuntzalaritza estrukturalista sinkronikoaren aitatzat hartu ohi den Ferdinand de Saussurek neogramatikoekin Leipzigen ikasi eta lehen lanetarik azterketa diakronikoari aitzinamendu larri eta iraunkorrak egiteaz landa, Genevan baino lehen Parisen hamarkada oso batez hizkuntzalaritza historikoa (= IEren gramatika konparatua) irakatsi zien XX. mendearen lehen hereneko maisurik handiena izan genuen Antoine Meilleti eta honen lagunei. AEBetan ere hango hizkuntzalaritza sinkronikoaren aitaponteko izan ziren Sapir eta Bloomfieldek Alemanian ikasi zuten edota alemaniar tradizioaren zordun izan ziren gerora hizkuntzalaritza historikoa lurralde berri haietan (navajoa, uto-azteka, hizkuntza algonkiarrak, mayak…) zabaltzean.

XIX. mendeko joera zientzia orotan hurbilketa historikoa nagusi izateaz gain**,** ikertzaileak eta are hiztun arruntak —are hizkuntzalaritzazko interes edo prestakuntza gabekoak ere— ohartu ziren hizkuntzak garai batetik bestera eta toki batetik bestera aldatu ohi direla. Mende horren akaburantz, neogramatikoei esker, hizkuntzalaritza historikoak bere objektuak berezko duen etengabeko aldaketa hori aztertzeko lanabesak jarri zituen —batez ere alderdi fonikoari dagokionez (*lege fonetikoak*)— eta baita aitzakiarik gabe eta sistematikoki azaldu nahi diren horien salbuespen askoren errua zuen etsaia (*analogia*) isolatu ere; horrenbestez, ondorio sendoak, usu atzerabide gabekoak, atera ziren hizkuntzen bilakabideaz, beren arteko loturez, haien jatorriaz, eta baita hizkuntzen egoera zaharragoen egituraz ere.

De Saussurek —20 urterekin, IE bokalismoari buruzko bere lizentziatura tesian (1879)—, aldi hartan ezagun ziren hizkuntza IEetan lekukotugabeko hots sail berri bat aldarrikatu zuen aitzin-IErako, hortik sortu hizkuntza haien bokalismoan ziren ezberdintasunen iturburutzat. De Saussure hil eta gero Kuryłowiczek identifikatu zituen hots horiek hitita deszifratu berriaren zeinu berezi batzuekin («laringalekin»); halaber, XX. mendeko ikerketa etengabeak grekeran, iranieran eta gainerako hizkuntza IEetan ere aurkitu ditu De Saussurek *more algebraico* proposatu eta historikoki galdutako hots horien zeharbideko aztarnak, honela ondoko hizkuntzetako bokalen «kolore» (tinbre) aldaketa edota luzaketa azaltzea lortuaz; lorpen hau linguistika historikoaren gertakari

hain oinarrizkoa da non edozein eskuliburutan aurki litekeen honen berri behar izanez gero (cf. Trask 1996). IEren berreraiketaren alderdi honetan erdietsitakoa metodo konparatuaren sendotasunaren froga ezagunena dugu, ez bakarra, ordea. Hizkuntzalaritza IEan edo semitikoan K. aurreko bi edo hiru mila urteko testuak izan arren, haietan garatutako metodoak balio unibertsala lortu du azken mende eta erdi honetan (ik. Haas 1969 klasikoa edo Crowley 1996), are gurea bezalako —isolatu eta erlatiboki testu gutxi edo berankorretako— hizkuntzetan;[2] geroztik kontinente guztietakoetan garatu da hurbilketa mota hau emaitza oparoekin, nahiz zientziaren historiaren bulgarizazio gehienetan honen berri eman ez, asti-faltaz, seguruenik.

Metodoarekiko zalantzak hemendik kanpo ere izan dira, jakina, baina nonahi izandako erantzunak haren unibertsaltasunetik abiatu ohi dira, azalpen eta emaitza berrien bitartez haren balioa areagotuaz: ik. § 2.5 hasierako Janhunenen aipua. Funtsean, metodo konparatua da hizkuntzen historiaurrea argitzeko erabili ohi den hurbilketa nonahi: dela hizkuntzen edo aitzinhizkuntzen erkaketaren bitartez, dela barne-berreraiketaren bidez, hizkuntzalariek hizkuntza bat(zu)en lehenagoko egoerak —inoiz hainbat hizkuntzaren hasierako egoera, familiaren aitzinhizkuntza— eskura litzakete.

Ohar bedi dialektoen arteko konparaketa *ez* dela barne-berreraiketa, baizik eta —izatez— hizkuntza-erkaketaren (hots, hizkuntzen artekoaren) pareko. Adar askotako familia batean ere, ezinbestean, erkaketaz aitzinhizkuntzara iritsi eta aurrera jarraitzeko bidea barne-berreraiketa dugu: nahiz hizkuntza erromantze asko, dozenaka prakrito eta ehunka kide izan gainerako azpi-familietan, AIEren azterketak soilik bere alternantzia morfologiko eta irregularitateen barne-berreraiketaz egin lezake aurrera; cf. «Internal reconstruction» (IR) is the explotation of patterns in the synchronic grammar of a single language or dialect to recover information about its prehistory» (Ringe 2003: 245). Euskaraz, dialektoarteko konparaketaz (*ardau, ardo, arno*, etab., erabiliaz) soilik [*ardâô]-ra irits gaitezke —ezta [*ardaħo]-ra ere (honen /ħ/ erortzearen arrazoiak ezagunak dira, cf. § 3.3.7)— eta **ardano*-ren bokalarteko *-n-* berreraikitzeko oinarrizko forma / konposizio-deribazio formaren arteko txandaketara (*ardao*, etab. / *ardan-*) jo behar dugu; honetarako, bidenabar, edozein dialekto aski da, guztietan aurkitzen baitugu alomorfia hori. Ez da esan beharrik, are gorago iristeko (adib., **e-da-ra-dan-o-*ra, ik. § 4.4.6.1) ezinbesteko dela AEren egitura morfologikoa ezagutzea, batez ere aditz nahiz izenkien ezker-aldea, eta lehendabiziko berreraiketan agortu dugun informazio dialektalak ezin lagun gaitzakeela, bai barne-berreraiketa sakonagoak baizik. Izan ere,

2. Hau, jakina, europarzentrismorik gordinenetik; gure kontinentean ere badira dagoeneko estatu-hizkuntza diren eta euskarak baino lekukotasun zahar askoz gehiagorik ez dutenak, errumaniera edo lituaniera, esaterako (ik. 5. kap.).

hurbilketa hau usuenik kanpo-berreraiketa eta -konparaketa baino boteretsuago gertatu ohi da edozein hizkuntza-familiaren azterketan (cf. Crowleyren gogoetak samoera/aitzin-austronesioaren barne-berreraiketaren ondorioez, 1996: § 6.1-6.2).

Euskalaritzaren garapenari dagokionez, ofiziokoen eta are zaletu hutsen artean ere, edozeinek daki bi garai zeharo ezberdinak direla gure lanbidean: Mitxelena aurrekoa eta Mitxelena ondokoa. Tradizio linguistiko aurreratuetan aspaldian arrunta zena berandu iritsi zen (75 urte geroago) alorrera: *euskararen lau dialekto literarioen gramatika*-n (1884) Arturo Campionek —bere maisu Bonaparte printzeari jarraikiz— behinola adierazten zigun inola ere alemaniar materialista (eta, beraz, jainkogabe) haiek idatzitako ezer irakurririk ez irakurtzeko inongo asmorik ez zuela, eta Miguel Unamunok ere urte bereko *Orígenes de la raza vasca* (sic) doktorego tesian nahiz ondoko euskara zein hizkuntzalaritza historikoari buruzko lan kaxkarretan ez zituen begiztatu neogramatikoenak; Julien Vinson bibliografo eta xobinista handia ere horien aurretikoa zen, pentsamoldez bederen.

Azkenik, Hugo Schuchardt izan zuten, hain zuzen, beren etsairik erraldoiena, eta hark bere ikuspegi pertsonalen misio-lurralde emankor bihurtu zuen Euskal Herria. Ondorioz, xx. mendean zehar oraindik «neogramatikoen lege hertsietarik urruti pozik bizi ahal izateko tokitzat» zuten euskal arloa bai austriarrak eta baita euskalaritzako haren segizioko ugariek ere (Julio Urkixo nagusiak barne), eta —Mitxelenak usu gogoratu legez— ez da esan beharrik hatsarre horietarik zer emaitza itxaron genezakeen (cf. Mitxelena 1956: 68-69, eta hemen § 3.3ren hasierako aipuan).

Mitxelenaren lan erraldoian (1950ean hasi eta 1987ko haren heriotzara arte) ikus genezake hizkuntzalaritza historiko konparatuak neogramatikoetarik abiatu eta Europa eta Ipar Ameriketako beste hainbat eskolatan tarteko hamarkadetan jaso garapen eta hedaduraren bitartez bildu ezagutzen fruitua. Hizkuntzaren hainbat alderdiren bilakabidearen azterketan erdietsitakoez landa, hizkuntzalaritza diakronikoaren oinarriak euskararen bilakabideari eta jatorriei ezartzeko borondatea eta, horrenbestez, azterketa diakronikoa modu estandarrean garatzeko bermea dugu haren lanaren emaitza nagusi. Irakurketa bikaina du berreraikitzaileak zein zaletuak haren *Lenguas y protolenguas*, duela 50 urte lehenengoz argitaratu zen arren (ik. Gorrotxategi 2013). Bertan aitzinhizkuntzen propietate eta ikerketek aurkeztu zailtasunak inon baino argiago azalduak ikusi ahalko ditu, baita pisatuak eta azalduak ere, egilearen irakurketa, gogoeta eta jardun luze eta sakonei eskerrak. Ez da inoiz aski markatuko *Fonética histórica vasca*-rekin (1961) eta *Sobre el pasado de la lengua vasca*-rekin (1964a; cf. Gómez 2011b), euskararen diakroniaren bi gailurrak aipatzearren, *Lenguas y Protolenguas*-ek (1963) duen barne-barnetiko lotura; euskararen diakroniaren ikerketan izandako jauzi kualitatiboek hizkuntzalaritza diakronikoan aintzinamenduarekin duten zorra, alegia.

### 1.3. Aitzinhizkuntzen natura eta egitekoaz

Aitzinhizkuntzak duela bi edo bost mila urte, honako edo harako tokitan, hitz egiten ziren eta gero, —denbora eta bilakabide sakon edo arin, luze edo labur (baina etengabeen) bitartez, geografia zahar berean edo handik urruti, hiztun asko edo gutxiko tradizioetan, testu urri edo ugaritan, aspaldi edo atzo bertan lekukotu—, hizkera, dialekto eta hizkuntza multzo bilakatutako zerak dira. Alabaina, «aitzinhizkuntza» deitzen ditugu, orobat, ondoko hizkuntzak (oro har, bat baino gehiago izan ohi dira) eta hauetako lekukotasunak oinarri hartuaz, gehi metodologia ezagun eta orokorra erabiliaz (metodo konparatua, alegia) berreraiki ohi ditugunak. Halabeharrez, hauek besteen ordez ere erabili ohi ditugu usu, berreraiketaren segurtasunaren arabera, noski, baina komeni da ez nahastea, inoiz bere osotasunean berreskuratuko ez duguna —beste edozein hizkuntza bezain oso zena bere egitura guztietan— eta gure ahaleginen, lanabesen, trebeziaren, teorien sendotasunaren eta, zergatik ez, zortearen arabera berreskuratutako irudi kamuts eta ilaun baina ezinutzizkoa.

Adibiderik klasikoena aipatzearren (cf., esaterako Mitxelena 1963), berreraiketarako nekez izan liteke ezer aitzin-erromantzea baino egoera hobean eta abantaila gehiagorekin, dela lekukotasunei, dela ikertzaileen maila eta kopuru erraldoiari, dela aitzinhizkuntza horretatik sortutako ondoko hizkuntzen historia aberats eta hornituari dagokionez… Baina, hala ere, erromantze hutsen lekukotasunaren bitartez ia ehun eta berrogeita hamar urteotan ez gara gauza izan aitzin-erromantzearentzat 10 bokal eskuratzeko, 9 baizik; ezta deklinabide markak edo aditz-joko aberatsak berregiteko ere, zinez jakin arren latinak ezaugarri horiek guztiak noizbait (denbora luzez) izan zituela. Hau ikusirik, ez da zer harritu AEaren kasuan ezagutza seguruak eta emaitza betirakoak apalak badira: guk ez dugu latinak oinordekotzat utzi familia zabala (IE osoa ez aipatzeagatik), ezta familia horietako hizkuntza anitzek duen lekukotasun zahar eta berritako zerrenda handi-oparoa ere; ez dugu, azkenik, ia mende eta erdi luzez era eraginkorretan aritutako ikertzaile-belaunaldi trebe ugaririk eta sarri ez dugu AE eta hizkuntzaren historiaurrea aztertzeko hona aldaturik onuragarri izango genituzkeen gainerako hainbat familia eta hizkuntzatako ikerketa ezinutzizkoen berri ere…

Mary Haas-ek (1969) dioskunez, aitzinhizkuntza bat (edo haren oinarrian den berreraiketa) gauzatzeko nahiz aldatzeko, lau bide izan ditzakegu:

1. delako hizkuntza horren beste ahaide berri batekiko erkaketa;
2. aitzinhizkuntza beste aitzinhizkuntza batekin erkatzea;
3. aztertu hizkuntza horrek jaso nahiz emandako mailegu zaharren azterketa, eta
4. lehendik ditugun lanabesekiko hurbilketa ezberdin, zuzenago edo aberatsagoa.

Euskararen historiaurrerako —gure hizkuntza delarik isolatu adibide ezagunena eta baita gainerako isolatuen ikerketarako eredugarri ere (cf. Lakarra 2017a)— ezin baliatu ahal izan dira (1) eta (2); (3)k, aldiz, garrantzi handia izan zuen AE modernoaren berreraiketa oinarriak jartzerakoan (ik. § 3). Halere, barne-berreraiketa, lekukotasunen ikerketa filologikoa, dialektoen arteko erkaketa, maileguen lekukotasuna, linguistika areala eta «hitzak eta gauzak» metodoak gainerako hizkuntza isolatuetan bezala euskalariek ere eskura (izan) dituzte euskararen historiaz gehiago ikasteko (gogora lan honen hasierako Campbellen aipua) eta, azken hamarkadetan, bigarren graduko barne-berreraiketa, tipologia diakronikoa eta gramatikalizazioa ere erants genitzake, orobat, zerrenda emankor horretan (Lakarra 2006a, 2013b, 2016a).

Zailtasunak zailtasun —eta inguruko (baina ez urrutixeagoko) gehienenak baino larriago dira gureak—, komeni da argi uztea hizkuntzalaritza historikoan ezin aitzina gaitezkeela aitzinhizkuntzarik gabe eta, beraz, ezta AE gabe ere, euskalaritzan eta hortik kanpo zenbait korronte ustez alternatibok aldarrikatu legez (cf. § 2.5.2 makrokonparaketaz). Zergatik? Batetik, berreraikitako aitzinhizkuntzak direlako benetan lekukotasunik gabeko hizkuntza mintzatuetara —edo garai jakin bateko lekukorik gabeko hizkeretara— hurbiltzeko bide bakarrak. Bestetik, berreraiketak eurak ez zaizkigulako berez edo hutsean axola (anekdotazaleei eta amateurrei ez bada, behintzat), haien bitartez lor genezakeenagatik baizik.

Zer da hori, ordea? Bada, benetako familietan, ez da ahaide-izaera horren froga garbiagorik lege fonetikoak eta gainerako aldaketak zehazki ezarriaz horien bitartez aitzinhizkuntza berreraikitzea eta bertatik ondoko hizkuntzetarako bilakabidea berregitea baino (ik. Thomason 1993, § 2.10ren hasieran aipatua).

Aitzinhizkuntza berreraikira (AEra) irits gaitezenean ere, ez hori baizik eta harako garai eta leku hartan benetan mintzatua genuke gure helburu nagusia, eta baita hizkuntza egoera horretatik ondokoetarako bidea berregitea ere, hots, haren historia azken finean (ik. § 2.1). Hau honela da, gainera, familia zabaleko nahiz laburrekoetan edota are hizkuntza bakarrekoetan ere, berreraiketa ez delako erabateko jardun edo jolasa: hots, ez dira soilik jatorri harrapagaitzak gure eginkizun eta erronka ehiztari amorratuen antzera. Diakronistak hizkuntzaren historia, haren egituraren bilakabidea, du burutan eta, lekukotasunetan jaso edo jasogabeko garai ezberdinetako aldaketa, irregularitate, hapax eta ezaugarri ulergaitz asko ezin antzeman ere litezke aitzinhizkuntza bera sakon eta zabal ezagutu gabe; horien azalpenean du bere justifikazioa berreraiketak, ez beste inon. [3]

---

3. XIX. mendetik hona IE berreraikian hainbat fabula eta guzti idatzi dira; orobat tibeto-burmeraz ere (Matisoff) eta horrela ikus liteke zer gordetzen den eta zer aldatzen aurreko ikertzaile belaunaldiek garaian garaiko berreraiketa paradigmaren arabera egindako «itzulpenetan».

## 1.4. Ahaidetasun bila

> Meillet pose un principe fondamental de la grammaire comparée, à savoir qu'en matière de parenté des langues les ressemblances extérieures n'ont aucune valeur et que le seul élément probant est l'existence de correspondances régulières : primat, donc, des séries sur les mots isolés, en même temps que reconnaissance du fait que le linguiste de métier doit s'en tenir scrupuleusement aux lois phonétiques, au lieu de se complaire dans les étymologies «au petit bonheur» qui font la joie de l'amateur (De Lamberterie 1998: 881).

«Gramatika konparatua» deritzogun zientzia sail diakronikoaren helburua hizkuntza ezberdinen (edota hizkuntza beraren egoera ezberdinen) historia garatzea dugu, beren arteko erkaketaren bidez; hizkuntza edo dialektoen sailkapena ez da bere helburu nagusi —honen hasikina litzateke, gehienez ere—, eta sailkapen horren berrespena soilik lor liteke bertatik jalgitako aitzinhizkuntzaren berreraiketak eta delako aitzinhizkuntzaren bilakabide eta banaketa gertatu den ikuspegi historikoaren ikerketa burutu ondoren.

Ahaidetasuna onartu ez ezik hura aztertzen jarri baino lehen, konparatistak kasu bakoitzean miaturiko gertakarien artean kausitu behar du zer den halabeharrez, unibertsalen bidez edo mailegaketaz ezin azal litekeenik eta, beraz, antzinako hizkuntza bat eta bakarra suposatuaz baino azaltzen ez den antzekotasunik. Horrela denean ondorioztatuko du soilik antzina hizkuntza bakarra zena («aitzinhizkuntza»), —hizkuntza bizi edo dagoeneko itzalitako edozein bezala— komunitate bakar batek espazio eta garai historiko batean hitze giten zuena eta areagotuz joan den desberdinketa eta banaketaren ondorioz egoera modernoko aniztasunera iritsi dena, zeinahi ere den (edo zen) bere hiztun kopurua edo erabilera eremua.

Meilletek zioenez (1925), hizkuntzetan ere bi eratako konparaketak dira: a) lege unibertsalak bilatzen dituztenak; b) ondorio historikoen xerka doazenak. Bata eta bestea bereizteko, berak ipuin harrigarrien adibidea jartzen digu: mundu osoko hizkuntza eta lurraldeetan pertsonaiak, ekintzak, funtzioak, ekintzak eta are egiturak… errepikatzen dira lehendabizikoetan, eta horregatik beragatik dira ipuin harrigarriak eta ez beste zerbait; alabaina, gertakari horretatik ez da jarraitzen horiek guztiek jatorri bera dutenik. Aldiz, indoeuropar mito berezi batzuk azter bagenitza —betierekotasunari dagozkionak—, bestelako ondorioetara iristen gara. Beharbada edari batez betiko bizitza lortzea ez da berezi egia; baina horrekin batera edari hori herri indoeuropar

---

Esanguratsua da euskalaritzaren tradizioan horrelakorik ez izatea, oso bestelakoak baitira, noski, Andramendiko idazkiak, Hannibalen kantua edo Veleiako «ostrakak».

guztietan dupin handi batean prestatu beharra (gogora *Asterix),* jainkoen eta deabruen arteko borrokak, aitzinhizkuntzatik datozen formula linguistiko jakin batzuk eta beste hainbat xehetasun ere aurrekoari lotuak datozenean —eta Irlandatik Indiara hedatzen diren hizkuntza eta lurraldeetako mitoetan, baina ez hortik landakoetan—, orduan hau ez da halabehar hutsa eta ezta egitura eta funtzio berdintasuna soila ere, ipuinen, (eta herrien eta hizkuntzen) jatorri beraren bidez azaldu beharreko erlazioa baizik. Horrelako argudiaketa biderik aurki liteke hizkuntzetan ere.

Antzak askotarikoak izan litezke hizkuntzen artean, hauek elkarren hurbileko zein oso urruneko izan, eta hizkuntzalariek lau sailetan banatzen dituzte beren izaera eta balio ezberdinaren arabera: a) halabehar hutsari zor zaizkion antzekotasunak,[4] b) hizkuntza unibertsalek sortutakoak,[5] c) mailegaketaren ondorioak eta d) hizkuntzek jatorri bera izatetik datozenak (cf. Pisani, Mitxelena 1964a-n aipatua).

Soilik azken biek adierazten dute erlazio historiko bat hizkuntzen artean (c: hizkuntza ukipena, d: lotura genetikoa) eta lehen biak (gehi mailegaketa) konturik handienaz baztertu behar dira hizkuntzen ahaidetasuna ikertzen denean.

Har ditzagun beren artean milaka kilometrotara diren bi hizkuntzaren zenbait antzekotasun (cf. Blust 2015eko iruzkina):[6]

---

4. Ik. Traskek (1996: 220) hawaiera eta grekera zaharraren artean bildu polit askoak eta Blustek (2015) sanskritoa eta malayeraren, parauhera eta ingelesaren, swahilia eta malaieraren, ainua eta malgatxearen… eta beste dozenakaren artean. Famatuak dira aspalditik aitzinhizkuntza komunetik ez datozen eta mailegu ere ez diren ing. *bad* 'gaizto' : pers. *bad* 'id' edo eusk. *alkar* : hol. *alkaar*. Traskek «fabrikatutako» euskara-hungariera antzekotasun aipagarriez (1997: azken atala) ik. § 2.10.1eko iruzkina eta 7. oharra.

5. Har bedi hau zentzu zabalean: batez ere fonosinbolismo eta onomatopeiak edo haur-hizkuntzako fenomenoak: 'aita' edo 'ama'-ren izenak oso antzekoak dira munduko hizkuntzetan, oilarraren kantuarena eta behiaren marruma ere bai…

6. Metodo konparatuaren adibide eta iruzkin onak emateaz gainera —hori ez da batere zaila aurkitzen bibliografian— artikulu hau berebizikoa da bertan Blevinsen (2007) «onga-austronesiera» hipotesi harrigarria ebaluatzeko, egilearen metodoa xehetasun handiz aztertzen baitu; hara bere ondorioen parte garrantzitsuena:

> The Austronesian-Ongan hypothesis is a castle built on sand, an elaborate illusion constructed by a skilled linguistic architect who has been seduced by the siren of long-range comparison, by the thrill of believing she has made a great discovery that other scholars have somehow overlooked. She is not the first competent linguist to have convinced herself of the reality of a linguistic relationship that virtually no one else can see. One need only remember Franz Bopp, one of the leading Indo-Europeanists of his generation, and a scholar whose memory is still honored, who believed he had found incontrovertible evidence that Austronesian and Indo-European are divergent branches of one language

| Zk. | Malaieraz | Hawaieraz | Euskaraz |
|---|---|---|---|
| 1. | mata | maka | begi |
| 2. | kutu | ʔuku | zorri |
| 3. | ikan | iʔa | arrain |
| 4. | laŋit | lani | zeru |
| 5. | taŋis | kani | negar egin |

Berehalakoan (a)-(b) eta (c) antzekotasun motak baztertzeaz gainera ondoko taulan bildutako hots korrespondentziak direla ikusten dugu:

| Zk. | Malaiera | : | Hawaiera | Adibideak |
|---|---|---|---|---|
| 1. | t | : | k | 1, 2, 5 |
| 2. | k | : | ʔ | 2, 3 |
| 3. | -C | : | Ø | 3, 4, 5 |
| 4. | ŋ | : | n | 4, 5 |

Korrespondentzia hauek soilik bost bikoterekin atera zaizkigu, baina errazki ugal litezke guztien adibideak eta, areago dena, hauek sendotzera ekar litezkeen beste dozenerdi hitzetan hainbat korrespondentzia berri aurki ditzakegu. Honelako ezer ezin gerta liteke halabeharrez eta ezta unibertsalen bidez edo mailegaketaz ere, eta ezinbestean malaiera eta hawaieraren artean ahaidetasun genetikoa dela frogatutzat onartuko dugu edo, beste hitzez, noizbait hizkuntza-egoera beretik (aitzin-austronesieratik, azken batean) sortuak direla bi hizkuntza horiek edo beren tarteko aitzinhizkuntza guztiak.[7]

Hizkuntzen berezko aldakortasun etengabea delarik gure hurbilketaren oinarri, horretan baino ezin bila litezke bi hizkuntza edo gehiagoren arteko ahaidetasunaren

---

family, and the gifted Swiss Indonesianist Renward Brandstetter, who nearly a century later wandered into the same trap via a rather different path (30).

Bada iruzkinaren aurreko bertsio laburrago bat egile beraren *The Austronesian languages*-en ere (2009: 707-709). Esan gabe doa Blevinsek euskaro-IE hipotesian Blustek salatu hainbat akats eta —batez ere— hainbat amarru errepikatzen dituela (ik. § 2.9.2).

7. Cf. «Scholars who propose disputed genetic relationships between languages or language families have learned by experience that in most cases such claims will not be taken seriously unless they are accompanied by evidence of recurrent sound correspondences such as those shown in limited form in Table 3. As a result, such correspondences must be manufactured where they do not exist in a natural state. The ways that this has been done are varied, and range from the naïve to the highly ingenious» (Blust 2015: 7). Horren adibide garbiena gure kasuan Fornirena genuke (ik. § 2.8.1).

frogak. Hots, badira era askotako aldaketak, batzuk orokorrak edo oso zabalduak (*ś* > *h,* ANag > ALag, Erak > Art…), eta beste batzuk mugatuagoak eta bakanagoak (CrV > $CV_1RV_1$, demagun) eta are inon aurkitu ez direnak ere: **h* > *ś,* ALag > ANag). Azaleko antzekotasunak ez dira ezeren froga, ez behintzat morfema horien ahaidetasunarena eta are gutxiago hizkuntzena, bazik eta usuenik halabehar hutsaren lillura nabarmen, Meilletek aspaldi ohartu legez (cf. De Lamberterie 1998).

Egitekoaren oinarriak hizkuntzalariek hots-aldaketa sistematikoetarik atera korrespondentzietan dautza —batez ere amateurren begiek ez dakusaten lat.-gr. *duo* : arm. *erku* gisako antzemangaitzetan. Hau da, hizkuntzalaritza historikoak *homologiak* bilatzen ditu —aitzinhizkuntzan bat eta bera ziren soinu, morfema edo morfema multzoak, ondoko hizkuntzetan horien jarraipen direnek beren artean nahiz aitzin hizkuntzakoarekin antz handirik izan edo ez— eta ez *analogiak,* hots, erkatutako morfemek axaleko antz handia izan arren jatorri komuna ezin segurta dezaketenak edota are goiko enparatuko hiru antzekotasunetarik direnak.

### 1.5. Berreraiketa

Hots-aldaketa erregularren bitartez lotutako hitz ahaideak («kognadoak») baliatuaz berreraiki ohi dira hizkuntza jakin batzuei dagozkien aitzinhizkuntzak. Zaletuen galdera izan ohi dira hizkuntzalariena baino gehiago «nola esaten zuten euskaldunek ‘ardo’ edo ‘etxe’ duela 3.000 urte?» eta antzekoak. Baina, hizkuntzalariak ohartuak dira —beren metodo eta lanabesen mugak ezagutzen badituzte, bederen— horrelako galdera zehatzei erantzun garbirik ematea ez dela erraz-erraza. Ez da hau aitzinhizkuntzekiko beren portaeraren arrazoi bakarra, ezta nagusia ere: eraikuntza horiek helburu garrantzitsuagoak (edo mugatuagoak) erdiesteko —historiaurrearen edo historiaren barneko irregulartasunen berri emateko edo hizkuntzaren bilakabidearen hainbat alderdi argitzeko—, hots, hizkuntzaren diakronia aztertu ahal izateko, baliagarri diren neurrian hartu ohi dute pisua ofiziokoentzat. Aitzinhizkuntzen eta hizkuntzalaritza historikoaren helburua hizkuntzen historia egitea dugu, bada, ez anekdota baztergarriak biltzea, bestelako metodo eta hurbilketek ezin azal ditzaketen bilakabide eta egiturazko irregularitateak bilatzea eta azaltzea baizik, hizkuntza-egoera ezberdinetako ezaugarri nagusien lotura sistematikoaren bidezko azalpena duelarik jomuga.

Egokitasun fonetikoak zehazten dituzten erregela sailen bitartez aitzinhizkuntzako unitate fonologikoen (inbentarioaren) kopuru eta distribuzioa erdietsi eta horien eta bestelakoren (fonotaktika eta morfologiaren) ezinutzizko laguntzaz aitzin-morfemen egitura osatzen da, hainbat eta seguru eta zehatzago osatu ere zenbat eta kognado ezberdin eta konbinaketa morfosintaktiko gehiago berreraikitzeko gai izan.

Ez da errotiko bereizkuntza metodologikorik izatez (lehenaren ohiko aberastasun eta zabaltasunaz at), kanpo- eta barne-berreraiketaren bitartez egindakoaren artean: hizkuntza-egoera jakin batekin erkatzeko beste bat(zuk) erdietsi nahi dira azken buruan. Usu, barne-berreraiketan aztertu hizkuntzen mailegaketak miatzeak garrantzi handia du; euskaraz bezala, komantxean (Casagrande), kanurieran (Greenberg) zein zelta britonikoan (Jackson) hainbat ikertzaile ospetsuk plazaratu bezala; ik. Lakarra (2012).[8]

Hizkuntzen arteko erkaketa hauek bi alderdien aitzinhizkuntza komuna berreraikitzeko asmoz eginak ez direnean, ez dira konparaketatzat hartu ohi, ezta kanpo-berreraiketatzat ere, baina sarri mailegatuaren kopuru eta garrantzia —batez ere hizkuntza emaileen historiei buruz askozaz gehiago jakin ohi delarik— hain da larri, eta hainbatekoa da hizkuntza hartzailearen barne-berreraiketari azterketa modu horrek emandako laguntza, non benetan berreraiketa «mistoa» dei genezakeen bigarren honetan burututakoa: barneko erkaketa, bai, berreraikitako hizkuntzen jatorriei dagokienez, baina kanpokoa oinarrizko azterketa garatzeko erabili morfemen aldetik; hau da, noski, AEren berreraiketa estandarraren (Mitxelena 1957a, *FHV*) estatusa (cf. Lakarra 2012, 2013a); ik. hemen § 3.

## 2. EUSKARAREN AHAIDETASUNEKIKO TEORIAK

> Besides Korean, Japanese has also been compared to macro-'Altaic', Austronesian, Uralic, Basque, Indo-European, and even to Maninka in Africa. Most of these short-lived pseudolinguistic proposals are not worth discussing here (Vovin 2017: Summary).

---

8. Alderantziz, maileguen azterketa eraginkorra gerta daiteke usu hizkuntza emailearen beraren azterketarako: suomierak ing. *king*-en kognado zahar bat gorde du (*kunnigas*), hizkuntza germanikoen barnetik abiaturik aitzinhizkuntzarako berreraiki litekeen edozer baino arkaikoagoa. Bide batez, familia uralikoaren azterketaren barnean asko landu da IEtik (edo honen azpifamiliaren batetik) geografia eta kronologia ezberdinetan jasotako edo horiei emandako maileguen analisia, eta baita alderantziz gertatua ere; lortutako emaitzek eta garatutako metodoek interesa dute oso bestelako eta handik urrutiko hizkuntza eta familiak aztertzen dituzten diakronistentzat ere; cf. Aikio, Janhunen, Kallio, Koivulehto, Parpola eta besteren lanak.

   Sinologia ere azken urteetan asko arduratu da txineratik inguruko hizkuntzetara egindako maileguez, hizkuntza modernoagoak gorde ez dituen ezaugarri arkaiko garrantzitsuak gorde baitituzte aitzintxineraren berreraiketarako (cf. Sagart & Xu 2001, Baxter & Sagart 2014); munduan barrena zabalduago den bidetik, hizkuntza austroasiatikoen, miao yao eta beste hainbaten diakronia txineratik hartu maileguetan oinarritzen da sarrienik.

> The Basque language is not strange. It is one of the 115 isolated languages of the world, which constitute the third part of all linguistic families (115 out of about 350). In principle, isolated languages are not very different from those having relatives. One should think that isolated languages did actually have some relatives that disappeared subsequently, or that they might diversify into small linguistic families. (Campbell 2011: laburpenetik).

## 2.1. Euskara eta iberiera[9]

Ezaguna denez, (ik. Tovar 1980 eta 5. kap.) Behe Erdi Aroaz geroz zenbait mendez jakintsu kanpotar nahiz bertokoen artean zabaldua zen eusko-kantabrismoa; Euskal Herrian teoria hori ia unibertsala izango da (Oihenartena bezalako salbuespenen batekin) eta are Txirrita bezalako ezikasi berantiarren artean aurkituko dugu. Dotrina horren arabera, euskaldunak antzinako kantabriar menderagaitzen jarraitzaileak omen ziren —nahasketarik gabeko benetako espainiar bakarrak— eta beren hizkuntza Iberiar Penintsula osoan erromatarrak eta gainerako kanpoko herriak bertaratu aurretik hitz egiten zena. Kanpotar horien ondorioz euskarak atzeraka egin omen zuen eta soilik Penintsularen iparraldean gorderik aurkituko genuke historikoki. Ustekizun hauek zirrikitu eta are handitzen zihoazen zuloak zituzten eta xviii. mendeaz geroz —batez ere Humboldten eraginez— «eusko-iberismo» bezala ezagutzen den beste teoria berri batek ordezkatuko ditu; formulazio berriak Levante aldean aurreko hamarkadetan aurkitu berunetako hizkuntza (iberiera) eta euskara ahaideak zirela defendatuko du, dela parekide («anai-arreba»), dela euskara iberieraren ondoko («ama-alaba»).

Iberiera eta euskararen ustezko ahaidetasun hori frogatzeko saio entzutetsuena Schuchardtena izan zen: bi hizkuntzen morfologiak erkatuaz haien aitzindeklinabide zaharra berreraiki uste baitzuen. Erabili zituen euskarazko erkagaiez ere zeresan franko litzatekeen arren, haren saioaren eroriko erabatekoa ez zen hortik etorri: 1921 eta 1927 bitartean Manuel Gómez Morenok erakutsi zuen —nahiz ez zitzaion kasu handirik egin hamarkada luze batean— Schuchardtek (1909) eta bestek xix. mendearen azken hamarkadaz geroztik zerabilten Hübnerrek orduantxe asmatu transliterazio sistemak huts larriak zituela eta, beraz, irakurketa berri egokiagoan kognadotzako askok ez zuela antz handirik euskarazko morfemekin; areago, Gómez Morenoren sisteman

9. Hemengo zenbait alderdi Lakarra (2013c)-n eta (2013e)-n ukitu dira zabalago; hainbat alderditan osagarri gertatzen dira Trask 1997 (azken atala) eta are Mitxelena 1964a (§ 6) bikainak ere.

Schuchardtek erabilitako lekukotasunak berrirakurtzean ikusi zen ez soilik iberierazko testu eta lekukotasunak baizik eta zeltiberierazkoak ere bazirela tartean nahas.[10]

Ondorioz, austriar erromanista eta euskalari sonatuaren lana guztiz birrindua geratu zen. Halere, geroztik ere jarraitu dute iberiera euskal hiztegien bitartez (Azkuerenaz, bereziki) ulertzeko saioek; alabaina, iberierazko testuak azken 80 urteotan segurtasunez irakur litezkeen arren ez dira ulertzen (ik. atal honen akabuko aipua eta dagoeneko Tovar 1954; cf. 3. kap.).

1945 aldera, filologoek lehenik eta gainerako ikertzaileek gero, atzera egin zuten delako lotura genetiko euskara-iberikotik (cf. Caro Baroja 1942-43 eta Tovar 1954).[11] Gibelamendu honetan garrantzi handia izan zuen itzulpen saio horien emaitza faltak (ez zen eta ez da modurik euskararen laguntzaz iberiar testuak itzultzeko, ezta atal txikixeagoak ulertzeko ere); komeni da gogoan izatea, ordea, itzulpena zein itzulpen-eza *ez* direla hizkuntzen arteko ahaidetasun- (edota ahaidetasun-faltaren) froga, —ez estandarra eta ez beharrezkoa—, beti edo gehienetan ahaidetasun horren epifenomeno garrantzitsuena izan ohi bada ere. Hots, irlandera modernoaren edo erromintxelaren bitartez testu hititak ez ulertzeak ez du kentzen hiru hizkuntza horiek (urruneko) ahaide izatea eta antzekoa gerta zitekeen euskara eta iberierarekin: Verd-ek (1980) modu oso pedagogikoan defendatu zuenez, erkagaien tradizio eta lanabesen urritasunak eragiten omen du bi hizkuntzen ahaidetasuna ez ezagutzea. Oso interesgarri eta beharrezko izanik gogoetok, ez da hor, haatik, edozein hizkuntzalarik dakiena zuritzeko aitzakiarik aski: Schuchardten erorikoaz gero oraindik orain inork ez du erabili metodo konparatua modu estandarrean iberiera eta euskara erkatzeko asmoz, eta hori ezinbestekoa da horrelako hipotesi bat baieztatu nahi bada. Halaber, *ez* delarik ahaidetasun faltaren froga-modu estandarrik (cf. Hamp 1998), gainerako tradizioetan legez, baiezkoaren aldekoek eman behar dituzte (gai badira) era jakin bateko frogak —metodo konparatuari beharrezko eta onargarri zaizkionak, alegia—. Horrelakorik ez eta —lortzeko esperantzarik ere gutxi—, 70eko hamarkadaz geroztik,

---

10. Bistan denez, eusko-iberismoa eta eusko-semito-hamitismoan jardun arren, hori ez zuen oztopo bestelako hipotesiei ere lotzeko, nahiz ez haietan baino etekin hobeekin, dirudienez: «Basque and the Caucasian languages were also well-known linguistic orphans, which inspired some speculation by Schuchardt as to their deeper relationship, though his methodological super-ego kept him from indulging in the sort of fanciful etymologizing and word comparisons churned out by many later comparativists» (Tuite 2007: 11).

11. Oraintsu (2016ko udazkena) Gorrotxategik, Vallejok eta García Castillerok argitaratu dute Bähr aitzindariaren tesiaren edo zehatzago (ik. 32. oharra), Boudaren bitartez eskuragarri zaigun bertsioaren alemanierazko originala; hara haren amaiera: «Si echamos un vistazo a todo el material aquí tratado, tenemos que llegar a una conclusión negativa: no hay pruebas para afirmar que el vasco está relacionado con el ibérico o que incluso continúa una lengua ibérica» (136 or.).

ahaidetasun genetikoa albo batera utzi eta nagusi izan diren euskara eta iberieraren arteko ustezko antzekotasunak eta kidetasunak (fonologikoak nahiz lexikoak) hizkuntza-kontaktuari, mailegaketari edo (geroago) hizkuntza-elkarte-fenomenoei egozten zaizkie.

«Hizkuntz eremu» deitura ere erabili delarik euskara eta iberieraren artekoak azaltzeko, komeni da ohartzea zer nolako baldintza hertsiak jarri ohi diren benetako hizkuntza-elkarteak definitzerakoan (ik., esaterako, Thomason 2001: 99): «[A] linguistic area is a geographical region containing a group of three or more languages that share some structural features as a result of contact rather than as a result of accident or inheritance from a common ancestor». Bistan da, ustezko iberiera-euskara erkaketak ezin bete lezakeela horrelakorik, ezta oinarrizkoena bera ere: nekez ezagut liteke euskara eta iberieraz (batez ere honetan) zer den aitzinhizkuntzatik datorrena eta zer izan litekeen baino frogatu ez deskribatu ez den bien arteko kontaktu horrezaz geroztiko eraginaren pean garatu dena. Alabaina, soilik irizpide hau eta dagozkion xehetasunak bete ondoren bilakatu ohi dira interesgarri ofiziokoen artean hizkuntza-elkarte famatu eta seguruenak (Balkanetakoa eta Indiakoa, esaterako); ik. Thomason (2001: 5. atala) elkarte nagusien aurkezpenerako.[12]

Antzekotasun fonologikoak bokalismoan nahiz kontsonantismoan aipatu izan dira: 5 bokal (a, e, i, o, u), beste hainbat herskari (/p/ falta bietan) eta 2 dardarkari dituzte biek; horrezaz gain, txistukarientzat bi zeinu dira iberiar idazkeran (bi fonema?), ez jakin zein artikulazio-puntu eta modutakoak (bi frikari, ala frikari eta afrikatu bana?), xehetasun fonetiko ezezagunekoak. Hortik aurrera, idazkera iberiarrak ez du hasperenarentzat zeinurik eta idazkera latindar edo greko erabat ezagunetan idatzi iberierazko morfemek ere ez dute aldean horren aztarnarik; ez da harritzeko, bada, hizkuntzalariek horrelako fonema ez alofonorik ez proposatzea iberiar fonologi sistemarako.

Badirudi datu horiek pisatzerakoan pisu gutxiko analogiei eman zaiela garrantzia (ustezko 5 bokaleko sistemari, demagun —nahiz horrelako soinu eta inbentarioak oso arruntak diren munduko hizkuntzen artean—) eta ukatu edo atzendu zaiola benetan zuenari, inongo homologiarik lortu gabe, ordea. Aldiz, Schuchardten nahiz Gavelen ustekizun zaharkituei kasu eginaz —nahiz Mitxelenaren berreraiketak (cf. § 3.3.1) ez lagundu batere—, edo horiek berariaz baliatuz, ez da ikusi (nahi) izan hasperenak euskal fonologia zaharrean (AEn eta gero Antzinateko eta Erdi Aroko epigrafian) duen pisua eta horrek euskarari Antzinateko hizkuntzen artean ematen dion nortasun eta

12. Esan gabe doa badirela bibliografian Thomasonen irizpide hertsiak asko nasaitzen dituzten proposamenak (hori horrela argiro markatu gabe, usuenik); beti bezala, ez dugu horrek diakronistarentzat dakarren abantailarik ikusten, eta bai, aldiz, hurbil datxekion «hizkuntz eremu» deizioaren baliogabetze-arriskua. Campbell (2017b)-ren ekarpen zuhurrean geografiaren aldetik ateratzen diren dibujoen koherentzia edo koherentzia faltaren gainetik benetan gertatu fenomeno historikoak lehenestea aldarrikatzen da.

bereizgarritasuna. Inork berreraiki ez duen (ezta horretarako urratsik behinenak eman ere) ustezko *AE-iberieraz geroztiko berrikuntzatzat jo izan da euskarazko hots hori —inongo oinarririk gabeko beste eraikuntza haren ondokotzat—, ezerezetik, zenbait euskalkitan edo, besterik ezean, AEn sortua; alabaina, ez da beharrik, ez arrazoirik horrelako ezer onartzeko euskalaritzaren ikuspuntutik; ik. § 3.5 /h/-ren jatorri etimologikoez. Ordainetan edo, ez da ikusten AEren fonologiak nola azal lezakeen iberierazko < Y >ren pean ezkutatzen d(ir)en soinua(k). Orobat, herskarien fonotaktikari ere ez zaio kasu handirik egin —Tovarrek 1954an aipatu arren dagoeneko—; esaterako, ozen eta txistukari ondoko neutralizazioei edo iberieraz bai baina euskaraz agertzen ez diren silaba zein hitz-amaierako herskariei (cf. Mitxelena 1979). Euskaraz *-t, -k* berankorrak dira, eta urriak (akitaniera ondokoak, hau da, Erdi Arora arte lekukotu gabeak) hitz-eraketa eta, batez ere, maileguetarik kanpo; fonosinbolismoetan, aldiz, ugariak dira, baina gogora bedi hauen forma kanonikoa lexiko arruntaren ispilu-irudia izan ohi dela nonahi eta, beraz, erro lexikoen **-T murriztapenaren alde egiten duela argiro datu honek (cf. § 4.1). Morfologian marka garrantzitsuak betetzen dituzte herskariek, baina morfema gramatikalen egiturak ere lexikoarenaz oso bestelakoak izan ohi dira (cf. § 4.4.3.2).

Lehen zabalago zen «euskara eta iberikoaren antzen» zerrendan gelditzen diren ustezko hainbat mailegu —ohiko ikusmoldean euskarak iberieratik hartuak, honen gizarte eta kulturazko nagusigoa dela eta— ez dira batere sinesgarri arrazoi ezberdinengatik: Mitxelenak (1970b) erakutsi zuen euskaraz *adin* < **har* + *din* (orain *ha-*, cf. § 4.4.3.2) zela eta euskararen barnean aski den adinako azalpena zuela (cf. *ber-din, gor-din, ur-din*). Beraz, iberierazko ADIN-ekiko antzekotasun miresgarri hori —are hitz honek iberieraz 'edade' esan nahi baleza ere—[13] halabehar hutsa litzateke (eta filologia iberikoak esanahia segurtatzen ez digun bitartean ezta hori ere), hizkuntzalaritza konparatuen umezaroetan ezagun diren eta hainbat buruhauste eman ohi duten lilluretarik bat gehiago.

*Adin*-i buruz Mitxelenak markatua bera esan liteke iberierarekiko erkaketan erabili diren *agir/agertu* edo hainbat zenbatzaileri buruz: *lau, bost, zazpi, zortzi, hamar*… -ek euskal etimologiak dituzte eta, beraz, ezin har litezkeela mailegutzat (ik. § 3.4). Izan ere, mailegaketaren zuzenbidea ikertu nahi denean, —edozein eskuliburuk azaldu ohi duen bezala (cf. Campbell 1998)—, bistakoa da hizkuntza emailean behar dela izan

13. Ez dugu horretarako oinarririk, ez bada euskarazkoarekiko hoskidetasuna; bestalde, bistakoa da 'edade' adiera ez dela *aitzin-iberiera-(euskara)-tik datorkeena euskararazko *adin*-entzat [< **ha* (3. graduko erakuslea) + *-din* 'bilakatu']. Bidenabar, nahiz Mitxelenak (1970) *hain* < *haren* eta *zein* < *zeren* legez azaldu, delako bilakabide horien hedadura dialektal exkax eta berankorrak —morfosintaxiarekikoak ez aipatzearren— egiantzekotasuna ukatzen dio proposamenari. Ez bide da horrelako zailtasunik, aldiz, **ha-din* 'hura izan dadin' eta **ze(r)din*-etik ('zer ere izan dadin') abiatuaz; ik. § 4.4.6.7 bigarrenaren hurbileko paralelo batez (*edo*).

(izatekotan) mailegatutakoaren banaketa eta azalpen morfologikoa, ez hartzailearenean: *foot-ball* ingelesezkoa ezin da euskaraz edo enparatuetan ***fut-bol* ('oin'-'pilota') analizatu; horregatik beragatik, euskararen barneko azalpenek (ik. § 4.6.9) erabat baztergarri egiten dute iberieratik zenbaki hau edo hori mailegatzeko aukera. *Hogei* eta *hiru*-n diren *h*-en berri ez emateaz lekora, —iberiera barneko analisi formala eta balio semantikoak ez daudela segurtatuak oraingoz atzenduaz (cf. De Hozen aipua § 2.1en akabuan)—, horietako edo *sei*-ko beste zenbait ezaugarri, /ei/ diptongoa, adibidez, (euskara historikoan nahiz ondare zaharreko, nahiz mailegu, den ahul eta suntsikorrena), nekez azal litezke duela 2500 urte inguruko iberiera > euskara mailegu gisa (ik. Lakarra 2010, 2014b):[14] **ei* > *i* (*ereitzi* > *iritzi*, *hareitz* > *haritz*, *leizar* > *lizar*, *eleiza* > *eliza*, etab.) ia orokorra da eta /ej/ moderno urriak, mailegu modernoetako diptongazioak ez direnean hatxe edo herskari ahostunen erorketa berantiarretarik sortu hiato dialektal are berantiarragoetarik datoz: *bei* 'vaca', *gei* < *gehi*, *lei, nei* '(*edin/egin)', *deitu* < *dictum*, etc.[15]

Are okerragoa da *hiri/huri*-rekin gertatua: Humboldtengandik gutxienez hitz hori berdindu izan da iberierazko *ili/iltir*ekin; Erdi Aroan gertatu *-l-* > *-r-* aldaketaz baliaturik eta ipar eta hegoaldeko *h-* zaharraz ahaztuaz, euskarak iberieratik (eta, beharbada, honek tartesieratik; ik. 19. oh.) hartutako mailegutzat azaldu ohi da hitz hori. Haatik, badira hainbat arazo semantiko hitzaren esanahi zaharrarekin ('itxitako espazio txiki bat'), dagoeneko aipatu iberierazko *h*-rik eza aski larria ez balitz ere, azalpen erosoegi horri egiantzekotasun ia guztia kentzen diotenak; cf. Lakarra (2010).[16] Okerrena, ordea,

---

14. Bestalde, Orduñak (2011) lehen (ik. § 4.6.5 eta 225. oh.) zeltikotzat jo izan den *hogei* ib. *orkei*-rekin berdindu eta **oin-ga-bi*-tik atera nahi lituzke biak; benetako forma ez azaltzeaz landa (*h*- azaltzen saiatu bai?), euskal morfologia eta fonetika zaharraren aldetik dituen arazoak bistakoak dira: baliteke **-ga-bi* beharrezko izatea forma iberikoa azaltzeko (?) baina euskarazkoarentzat ez dut paralelo fonetiko ez morfologikorik ezagutzen. Norbaiti forma *biga*-k besterik pentsarazten badio, jakin beza ez dela *bi*-ren alomorfo bisilabiko bakarra (cf. *bida*); **bida* > *bi.a* > *biga* bilakabide guztiz arrunta litzateke, paralelo ugarirekin, baina **biga* > *bi.a* > *bida*, aldiz, inongo egiantzik gabea genuke.

15. Gorrotxategik (1987b) azaldu bezala, eusk. *hogei* : zelt. *ugeint*, etab. aski desegokia da, euskara-zelta kontaktuaren garaian '20'-arentzat zeltaz berreraiki zitekeena **wikanti* antzeko zerbait baitzen seguruenik, horrek euskaraz ***(b)ikandi* edo emanaz. Ez da erkaketa horren huts bakarra (aski eta sobera izan arren deuseztatzeko): 1) *ugeint* horretatik ezin atera liteke *hogei* euskal fonetika historiko estandarrean; 2) ez da arrazoirik pentsatzeko *hogei*-k egitura fonetiko horretan iraun duela aldaketarik gabe milurteko anitzez. Ik. § 4.6.3 euskara eta zeltaren arteko erlazioez eta, batez ere, 225. oharra mailegu-proposamen jakin honetaz.

16. Cf. *ebili* > *ibili*, etab. eta gogora bedi hitz hau izenaren eskubitara zihoala, 2. mailako azentuarekin, beraz, eta bokalen tinbrea ilun edo aldakorrago zela; erro berekoak dira (*-tz* erantsiarekin) *hertsi, heste, hesi, hertz*, etab. eta baita metatesidun *erhi* 'hatz' ere (honetaz ik. § 3.2.2).

euskalariarentzat zera da: kanpoko etimologia horrek ez duela ezer esaten hitzak euskararen barnean duen morfologiaz (atzizki ezaguna, CVC bat aurretik), eta ezta hitz horren familiaz eta esanahi zaharraz ere: ez ote erlaziorik *hiri* 'ziudade' eta denborazko edo espazioko *-(h)iri* 'hurbil'-en artean? (cf. Corominas & Pascual, s.u. *cerca*$_1$ 'hesia' : *cerca*$_2$ 'hurbil': **her + -i > hiri*).

Ez da ahaztekoa, gainera, ezin berdin litezkeela idazkera-eremuak eta hizkuntza-eremuak: hots —lekukotasun-faltatik edo haien isiltasunaren erabilera maltzurraz ez bada—, euskara garai jakin batean batere ez idaztetik Euskal Herri historiko osoan hizkuntza hori ez zela hitz egiten ondoriozta ezin litekeen bezala, iberieraz idatzitako testuak Andaluziatik Marseillara bitarte aurkitzeak ez dakar lurralde horretan guztian iberiera ama-hizkuntza bezala hitz egin izana.[17] Hain zuzen ere, Javier de Hozek defendatu du azken 25 urtoetan merkatalgo- edo administrazio-zereginez landa, iberiera oraingo Alacant eta Valentziako probintzietan baino ez zela inoren ama-hizkuntza.

Bestalde, De Hozen teoria zuzena izan nahiz ez izan,[18] guri dagokigunez ahaidetasuna ez eze mailegaketa bera ere ez da azaleko antzekotasun hutsez ziurtatzen. Ez da esan beharrik, kontaktu iraunkor eta zabalik gabe eta elebidun portzentai garrantzitsurik gabe nekez izan zitekeela mailegurik (edo substraturik) hizkuntzon artean: aspaldi alboratutako ustezko < GUDUA DEISDEA > famatuak —Untermann-ek zuzendu eta 1970az gero < KUTUR OISOR > da irakurketa estandarra Lakarra (2006a)-n gogoratu bezala— eta beste hainbat saiok erakusten digute *erabateko* egokitasun formala eta semantikoa *gutxieneko baldintza* dela ikerketa abiatzeko, baina ez dela aski, inolaz ere, ontzat emateko besterik gabe.

Euskara-iberiera konparaketen historian nabarmena da erkagaiei eskatzen zaien egokitasuna igo ahala —eta hori bai, iberiar filologiaren nahiz euskararen gramatika historikoaren garapenari zor zaie— ustezko antzekotasunok etengabe urrituaz eta desagertuaz doazela. Tovarrek berak 1954an «bastante o muy dudosos» deitzen zituen *adin, bel, aur, argi, azkandi, ba-, bai, galdur,* BAN, *gudur, irrada*, BITU DEDI, *-ke, kide,* DADULA, DAUGU, ECARIU, EGIAR, ECUSU, *golde*, EUGIAR, ILDU, NERE(ILDUN),

17. Kontuan hartzekoak dira Janhunen eta besteren gogoetak Eurasia zaharreko hizkuntzen eta familien (ezinbesteko) tamaina laburraz (cf. § 2.10.2): zenbat hizkuntza ote Iberiar Penintsula osoan IEk sartu aurretik lurralde arazotsuago batean (Japonian) «Yayoi-aurreko» kultura baino lehen 300 bat proposatzen badira (Janhunen 2008)? Zenbat horietarik Euskal Herria eta Valentzia bitartean? Arrazoiren bat pentsatzeko guztiak ahaide zirela? Eta lurralde horietan iberiera eta euskara baino ez zirela pentsatzeko? Ik. antzeko oharrak 2.4 eta 2.10.2 ataletan.

18. Gaia ez dago itxia eta badira (batez ere Katalunia aldean), iberierari jatorria Valentziaz iparraldera bilatu nahiko lioketenak; ez naiz gauza beren argudio linguistikoak aski sendoak diren erabakitzeko (cf. De Hoz 2009, 2013) baina ez dute lotura zuzenik euskara-iberikoarekin eta, batez ere, ez dira gehiegi arduratu aurreko oharreko gogoetei erantzunik bilatzen.

-TIKO, SALIR, *Calahorra, -z, etxe*, BERRI, *muño, (h)andi, ni/(hi), bi, tarik,* NEDI, *aitz eta aratoi;* «probables» ziren harentzat BELTZ, ARA TACE, GUDUA DEISTEA, *p-f-h*-ren eta hasierako *r*-ren falta zenbait bukaera komun (*-a, -i-, -ik, -an, -ari, -la, -nai* eta beste zenbait), ARRIACA, IBERUS, -PEDA/-BEDA (~BIDE), ETA; «seguros», azkenik, -TAR, -EN genit., SELDAR, LAGUN, eta *ld* > *ll*. De Hozen (2011)-ko bilaketa ezinbestez askozaz zehatz eta eguneratuagoan euskara-iberiera kognado segurutzat ez da alerik aurkezten (ezta bakar bat ere) eta eztabaida sakonagorako bigarren aukera bat merezi luketenak ere ez dira dozenara heltzen.

Agian halabeharrez, hizkuntzon arteko erkaketa Iberiar Penintsulan Antzinatean gainerako hizkuntza ez-IEren alerik izan ez balitz legez burutu izan da, enparatuko horien lekukotasun erabilgarririk heldu ez zaigulako;[19] nolanahi ere, ez da luzatu beharrik hondarren eta hondar-hizkuntzen gainean egindako konparaketek dituzten ahuldade eta arriskuez. Haatik, Antzinateko hizkuntza eta hizkuntza-familien tamaina laburraz dakigunaz landa (ik. § 2.10.2), Penintsulako kasuan ezaguna da (gogora Estrabon) zeltez landa «iberiar» (= bertako, ez feniziar edo greziar) hainbat idazkera eta hizkuntza zirela.

Azkenik, ezin da sinesgarritasun handirik jarri (ia) batere ulertzen ez den hizkuntza baten laguntzan,[20] batez ere hura argitzeko hamarkada eta mendeetan zehar egindako saio ia guztietan euskara bera (modernoa, hori bai) erabili izan delarik azalpenerako oinarri gisa:

> El balance de lo que sabemos sobre el léxico ibérico es resumible en pocas líneas. Hay algunos términos repetidos con frecuencia suficiente como para que podamos identificarlos como tales, sin que ello nos permita presumir siquiera su significado. Su presencia exclusiva en un tipo de documento puede ser un indicio, pero hay que recordar que sólo los plomos y los dipintos del tipo Liria contienen un vocabulario

19. Tartesiera guztiz ulertezina da eta, beraz, hain ezgai edozertarako non bere corpusaren laburrak ez baitu itxaropen handirik ematen noizbait ulertuko dugula pentsatzeko (cf. De Hoz 2010-2011). Koch-ek (2009, etab.), ostera, uste du dialekto zelta arkaiko bat dela eta horrenbestez (gutxienez) IE azpitalde honen historia osoa aldatu nahi luke; alabaina, ezkorrak nagusi dira (de Hoz, Gorrotxategi, Eska, Prósper, etab.).

20. Igarotako 30 urteotan aitzinamenduren batzuk izan arren, ez da ahaztekoa xx. mendearen azken hereneko ikertzailerik garrantzitsuenetariko batek esandakoa iberieraren gramatikaren oinarriez egin saioaren amaian: «Ruego a los lectores que olviden lo antes posible todas las hipótesis mías que entran en campo del significado de palabras o de morfemas ibéricos (…) En cambio, a mi modo de ver, la base imprescindible de todos los estudios de esta clase es la segmentación minuciosa de los textos, y era mi intención el hacer visibles algunos caminos (…) para realizar esta tarea que todavía está muy lejos de haber llegado a resultados satisfactorios» (Untermann 1987: 51).

> moderadamente rico, y que la aparición de una palabra en ambos y sólo en ellos no significa absolutamente nada, tan sólo que se trata de una palabra ibérica. Por otra parte ya hemos visto los criterios flexibles con que los escribas ibéricos utilizaban la interpunción, y no siempre estamos seguros de que una supuesta palabra no sea un complejo de elementos (De Hoz 2011: 323).[21]

Bada, zorionez, bide emankorragorik euskararen historia(urrea)ren azterketarako.[22]

## 2.2. Euskara-hamitikoa

Izatez, teoria hau ez da historiografikoki euskara-iberieraren bigarren graduko ondorio bat baizik; hari lotua da errotik eta ezin, beraz, teoria horren patu gaiztoa saihestu: euskara eta iberiera ahaidetzat hartzen zuen (1), eta iberiera Afrika iparraldetik etorria zelakoan Hispaniako bere lurraldeetara hedatzen (2), eta iberiera Afrika iparraldeko hizkuntza horien ahaide zelakoan (3), euskara hizkuntza hamito-semitikokoa zela ondorioztatzen, azkenik (4).

Argudio-kate horretan ahulezia larriak adabegi orotan dira, nahiz eraikuntza osoa erortzeko bakar batekoekin aski izan: gorago mintzatu gara (1)-i buruz eta goazen zuzenean (2) eta (3)-ra. Iberiar kultura materialean Afrikako iparraldetik hartutako osagaiak izateak ez du inolaz ere frogatzen iberiera bera Afrika iparraldetik etorria

---

21. Gehi bekio: «Es significativo el evidente parecido entre este sistema fonológico y el que se reconstruye para el vasco antiguo. Las coincidencias serían aún mucho más significativas *si se comprobase* que la oposición existente en el modo de articulación de las series oclusivas y de las vibrantes era de tensión, que como quieren varios autores existían dos laterales diferenciadas también de ese modo, y que las sibilantes tenían diferentes puntos de articulación. Obviamente se plantea la posibilidad de que estos hechos no sean casuales, máxime tomando en cuenta los hechos de morfofonología ya comentados, pero como veremos más adelante (§3.7) existe una explicación sencilla de esos hechos [«Hizkuntza eremuak» ditu aipu; baina ik. testuan honetaz], sin recurrir en modo alguno a la teoría del vasco-iberismo ya rechazada más arriba (De Hoz 2011: 257; etzanak nireak dira [JAL]).

22. Jakingarriak dira «benetako euskalaritzaren» aldetik haren gunean den Mitxelenaren berreraiketa lanetan iberikoaz egindako erreferentziak, *FHV*ren lehen edizioko «no han dejado de tenerse en cuenta los textos ibéricos aunque rara vez se aduzca su testimonio (…) No se ha atendido aquí, por el contrario, a los resultados de la comparación vasco-caucásica»-tik (1961: 18) 2.eko «en lo que se refiere a la comparación con el ibérico de una parte y con las lenguas caucásicas —en su totalidad o en alguno de sus grupos— de otra, el tiempo parece haber hablado a favor del escepticismo y, por consiguiente, de la prudencia: no veo, pues, razón de intentar una nueva justificación de mi actitud abstencionista»-ra (1977: 462), eta hortik 1987ko «Baskisch = Hispanisch oder = Gallisch» bitxira.

denik eta are gutxiago —dirudienez eremu horretan moderno xamarrak diren— horko hizkuntza hamito-semitikoen ahaide. Gainera, ezezko froga ez bada ere, azken honetaz kontrako diagnosi oso garrantzitsua dugu epe luzeko ezaugarri batean, bataren eta bestearen erro egitura hain kontrakoan —CVCV iberiera, C-C hamitikoa eta C-C-C semitikoa— eta morfologian (eransle edo polisintetikoa eta ez hamitiko eta semitikoaren barne flexioa), hain zuzen.

Bestalde, Schuchardten ustezko kognadoak —akadiera *immeru* : eusk. *umerri* (< *ume berri*, hots, 'ardi gazte') eta horrelakoak— ez ziren eta ez dira asebetegarri: «no hace falta pues que nos entretengamos ahora en discutirlas, ya que incluso un examen somero es suficiente para darse cuenta de su extrema superficialidad» (Mitxelena 1964: 62); izan ere, Zyhlarz-ek (1932) esatekoak esanak zituen hurbilketa hau *reductio ad absurdum* polit batera eramanaz: erakutsi zuenez, bera gai zen —Schuchardten «arte» berberak erabiliaz, noski—, nubiera ez euskararekin baizik eta alemanierarekin ahaidetzeko… Ezagun denez, *RIEV*-en Urkixok ez Zylharzen artikulu osoa alemanez zein itzulirik, baizik eta Bährrek egindako laburpen txiki jasangarriagoa argitaratu zuen, maisu austriarra dagoeneko 1927an zendua zen arren.

Geroago —50'etarik aurrera— Mukarovskyk lehenagoko bereberearekikoak zabalduaz euskara fula eta Afrikako beste hizkuntza batzuekin erkatu zuen. Haren lanaz aski izan bedi Chaker berebereren berezilariak dioskuna: familiaren jatorriekiko ikerketa estandarretan euskararen aukera inola ere «uhin nagusia» ez izateaz landa, Mukarovsky ezaguna omen zen erkaketaren alde hartako lekukotasunekin erabili zabarkeria eta jokutriengatik («Mukarovsky utilise des données linguistiques souvent approximatives, voire même tout à fait erronnées», 1984: 241). Traskek (1997: azken atala) horren berririk gabe euskararen alderditik eransten duena ez da hobea eta aski izan bedi honaino bildutakoa, nahiz gehiago eranstea erraz litzatekeen haren lanen irakurketa axalekoenean ere.

### 2.3. Guantxea eta euskara

Hipotesi honekin nolabaiteko lotura du euskara-guantxeak, guantxeen hizkuntza bereberaren aldaera bat baitzen, dirudienez: «What is fairly clearly another A[fro] A[siatic] language, Guanche, was once spoken by the indigenes of the Canary Islands. It is believed by some linguists (Diakonoff 1988: 19) to have constituted a third major subdivision of Libyco-Bereber» (Hayward 2000: 77).[23] Haatik, horretan adituak direnen

23. Blench (2014: 1) ez da horren argia —«it is often claimed that Berbers reached the Canaries at an unspecified date in the past, leading to the formation of the Guanche, the now-vanished aboriginal population (Wölfel 1965)»—; haatik, egile honen lanak pisatzerakoan ezin ahantz

iritzi zabalduenaren aurka Federico Krutwigek (*Garaldea*, 1978),[24] euskara modernoaren bitartez —A lineala, Aostako toponimia, piktoen idazkiak eta sumeriera pixka batez landa—, testu guantxeak «interpretatu» eta guantxe-euskara hiztegitxoa eratzeaz gainera, aitzin-euskara-guantxearen aditzaren paradigma osoak berreraiki uste zituen, aitzin-bizkaiera-guantxearenak, zehatzago, berak berariaz aitortu bezala.

Ez dut hemen tokirik Krutwigek egiten duen testu kanariarren erabilera azaltzeko; nahi duenak jo lezake Wölfel-en *Monumenta Linguae Canariae*-ren berrargitalpenera (gaztelaniaz itzulirik, Tenerife 1996, bi lib.). Jakingarriak, ikusgarriak eta harrigarriak dira *Garaldea*-ren bigarren parteko «los textos caledonios» eta «otros estudios garaldetanos» edo lehenbizikoko «la población megalítica y la división de las lenguas románicas», baina gainerako atalak oro ere ahaztezinak dira, bereziki «el cientifismo» (§7; zientzia proletarioaz eta antzeko kutixiez hornitua eta «egokitua»).[25]

Nahiz K.o.-ko VII-X. mendeetakoak (cf. §5) nahiz geroagokoak izan dialekto historiko zaharrenak, gainerakoak are berriago, bitxi egiten da guantxea horietako bati enparatuei baino «lotuago» (?!) izatea. «Leinuei» legozkienak edo are lehenagokoak balira euskalki banaketak ere guantxearekikoak ez lirateke konponduko, batez ere Krutwigen guantxeraz latinetiko (edo erromantzetiko) euskarazko maileguak (*bukatu, gura*) edo izatea, ezta Bk eta gainerako euskalkiek AE ondotik —usuenik EBZz geroz— hartutako ezaugarriak izatea ere (berrikuntza nabarmenak, alegia): *etxe, fan, -gabe*, *-en* genit. pl., *al* interrogatiboa…

Zaila bide da Europan 70eko hamarkadaren amaieran horren pareko hizkuntzalaritza parodia funtsik gabekorik aurkitzea… marxismoaz, zibernetikaz edo gainerakoez erantsi eta liburuaren kapitulu osoak hartzen dituzten xelebrekeriak alde batera utzirik. Azkenik,

---

liteke «generalista» bat dela, ez jardun luzeko aditua gehienetan aztertzen dituen hizkuntzetan eta horien historietan.

24. Krutwigen lan osoa monografikoki norbaitek azter ez dezan bitartean —haren «ideia» linguistikoak ahaztu gabe— ezinbestekoa da X. Zabaltzak eskaintzen dion *Mater Vasconia (lenguas, fueros y discursos nacionales en los países vascos)* liburuko (Donostia 2005, 325 eta hh.) atala, zentzuz eta aztertutako testuen ezagutzaz betea.

25. Bitxia da euskararen jatorriekiko edo konparazioarekiko Krutwig jaunaren «ideiak» erabiltzerakoan zein gutxi aipatzen diren —ofiziokoek erabili ohi duten bibliografia estandarra ere saihesteaz landa (hor, jakina, Krutwig ez da inoiz ageri)—, nahiz eta jende mota horrek «interdisziplinaritatea» eta antzekoak ahotan darabiltzan txitean-pitean. Ik. *Uztaro*-n nire (Lakarra 1999) iruzkin artikulua Martinez Lizarduikoren «Euskal Zibilizazio» definiezinaz eta nireari egileak eman hain kiroltasun gutxiko erantzuna «Madrilgo botere zapaltzailearen ordezkari, etab.»; letra horren soinua ez zen berbera 2000 inguruan edo 2011 oso aspaldiko iruditzen zaigun honetan.

ezin aipatzeke laga egileak egiten duen *autolaudatioa*, unibertsitateetako irakasle guztiz motzen aurrean (ik. Lakarra 2014: § 8.3).[26]

### 2.4. Euskara-kaukasiera[27]

«Ekialdeko Iberiak» (= Georgiak) eta Mendebalekoak halabeharrez izan behar zituzten lotura historiko edo etnografikoei hizkuntz ahaidetasuna ere eransteko asmotan idatzi ziren dagoeneko zenbait saio XIX. mendearen akaburantz, Aita Fita Historiako Erret-Akademiaren buruarenak tarteko. XX.aren hasieran era guztietako ahaidetasunen alde egin ohi zuen Schuchardtez[28] edo Bouda (are okerragoaz)[29] landa, Lafon ere bazen hipotesi honen aldeko euskalarien artean; are gehiago, ikertzaile honek euskararen barne-berreraiketa arin(egi) baten ondoren (cf. Lafon 1950) —eta lehen—, bide horretatik erdiets ezin omen zitezkeen argitasunak Kaukasoko hizkuntzei esker lortu ahalko zirela aldarrikatu zuen behin baino gehiagotan (*FHV* aurretik nahiz ondotik), teknika hura bere osotasunean garatzen ahalegindu ordez. Bistan da Lafonen asmoak ez direla bete eta, aldiz, argi gelditu dela barne-berreraiketa emankorrera jo beharra frogatu gabeko ahaidetasunen laguntza ustelera jo ordez.[30]

Euskalari ez zirenen artean Georgia aldeko zenbait zaletuk Euskal Herriko aldizkariren batean —ez berezilarientzat, alegia— defendatu zuten ideia hori 1969az geroztik, baina begi-bistakoa da lehen (Vogt, Machavariani) eta oraintsuago (Klimov, Gamkrelidze,

---

26. Nire ustez, Krutwigen langa eta gailurrak berdindu ez arren —baina aitortzen dut Mitxelenak juxtu kontrara zeritzola— Iowako R. Frank hispanista ohiak (*En torno a un mito: el euskera y el indoeuropeo,* 1978) «I expect that few linguists will find the author's 'game' entertaining» jaso zuen Trasken aldetik (1997: 378), hark *hatz, joko* eta *su*-z egin «analisi» bitxi bezain funsgabea pare bat orrialdetan sarraskitu ondoren. Ez dirudi egilearen azken 40 urteotako ekoizpenak bertoko friki taldetxoren batentzako opariez landa ezer hoberik duenik.

27. Atal honetarako sarrerarik hoberena oraindik Mitxelena (1964a)-ko azken atala eta 1968ko artikulua dira; ik., orobat, Schmidt (1989) eta Klimov (1991) eta Tuite-ren (2007) zabalago eta eguneratuagoa.

28. Bistan da, honetan bazuten eraginik egile honek (eta Uhlenbeckek, Trombettik zein Tovarrek) defendatu usteek hizkuntzen (ez soilik euskararen) izaera poligenetikoaz; famatua da gai honetaz Schuchardt eta Meilleten artean izandako eztabaida. Ik. Lakarra (2003).

29. Honek, euskaraz landa, sumeriera, nahuatla, Paskuako irlakoa, etruskoa, paleosiberiarrak eta Kaukasoko hizkuntzak ezker-eskubi erabili zituen; ez da esan beharrik makrokonparatistarik ausart eta ahulenek dutela eredutzat; ik. Alonso de la Fuente (2007) Braunen antzeko zerbait kasutan.

30. Cf. Lakarra (1998b) erro-egituren erkaketatik abiatutako kritika erantsi baterako, Harrisek (1990) egin IE-kartveliera erroen erkaketa erabiliaz.

Harris…) kartvelieraren diakronista hoberenek ez dutela inoiz euskararekiko erkaketa benetako aukeratzat hartu beraiek aztertzen zituzten hizkuntzen bilakabidea edota haien jatorria argitzeko orduan (cf. *Lingua* 2005eko ale berezia hango hizkuntzen sinkroniaz eta diakroniaz); ez da ikusten zergatik egin behar dieten abegi hoberik euskalariek xelebrekeria horiei.[31]

xix. mendean euskara eta georgiera hurbilekotzat jotzeko aztertzaileek bi eratako arrazoiak zituzten, zein baino zein desbideratuagoak: a) lehenik, Europako edo inguruetako gehienekin gertatzen zenaren aurka, bi hizkuntzok ez ziren IEak, ez eta «uralo-altaikoak» edo semitikoak ere eta, hortik… beren artean ahaideak izango; b) aipatu familiotakoak ez bezala, erkatutako bi hizkuntzok ergatiboak ziren eta logikako oinarrizko akats bati —«baldin eta A eta B ez badira X, orduan biak (eta bi horiek bakarrik gainera) izango dira Z»— argumentu tipologiko ahul bat erantsi zitzaion; bi, beharbada, aditz pluripertsonal aberatsarena gogoan izanik (cf. hemen § 4.6.6).

Inor gutxi saiatu da delako erkaketa hori metodo konparatu estandarra erabiliaz burutzen eta, egin denean ere, emaitza oso ahulekin, Lafonek berak aitortu bezala: Mitxelenak 1950ean Boudak (eta bestek) bere saioetan nolako amarruak zituen[32] erakutsi zuen, eta oraintsuago Traskek eta De Alonso-k (2007) berdintsuak edo are

31. Marr eta bere eskolakoak bai saiatu ziren «geruza jafetikoaren» bidez georgiera eta euskara lotzen (ik. Mitxelena 1964a eta Tuite 2007); haien aurkariei dagokienez, hara zer dioskun Tuitek: «Among the principles shared by Javaxišvili, Čikobava and like-minded Soviet colleagues with the West-European "Schuchardtian" opposition were refusal of the strict methodological separation of synchronic and diachronic approaches to the study of language or culture; and a greater openness to historical explanations *invoking social phenomena, rather than non-social mechanisms such as exceptionless sound laws*» (2007: 12).

32. Bereetan… eta are inorenetan! 11. oharrean aipatu dugu Boudak argitaratu zuela (baina ez oso-osorik) Bährren tesia; hara hor jarritako hitzaurretik hona dakargun zatitxo ezinutzizkoa (Gorrotxategi, Vallejo & García Castillero 2016: 27):

> Solamente he suprimido unas pocas páginas del manuscrito al final, porque el autor se manifiesta de manera breve, demasiado breve e influido por opiniones de otros autores, también de segunda mano, sobre nuevas tentativas de vincular el vasco con otras lenguas. Estos argumentos no tienen cabida aquí y han sido retomados con acierto por otros investigadores como C. C. Uhlenbeck en diversos trabajos más recientes. Bähr llega a la conclusión de que hay que calificar el vasco todavía como una lengua aislada.
>
> Su escepticismo es apresurado: aquí no debe quedar ninguna duda de que ya no podemos hablar de una lengua aislada al referirnos al vasco. Mi amigo René Lafon y yo hemos avanzado en este terreno tan espinoso y les puedo asegurar que el parentesco entre el vasco y las lenguas caucásicas puede darse como un hecho seguro.

Honelakoen aurrean, § 2.10.2 akabuko Mitxelenaren Boudarekiko hitzak are goxoegiak begitantzen zaizkigu.

larriagoak esan ahal izan dituzte Braun-en eta enparatuen lanez. Era guztietako akatsak dira bibliografia modu honetan: edozein garaitako euskal hitzak, modernoak izan edo zahar, beste aldeko zeinahi hizkuntza edo dialektotakoarekin; non mailegu erromaniko argiak ohartzeke —beste aldean beste horrenbeste, gutxienez, mundu osoko hizkuntza multzo nahasienetakoa izaki— (cf. Schmidt 1989 eta Charachidze 1990-91); noiz hitzak nahi bezala moztuak, noiz euskal morfologiaren ezaugarri eta bilakabide behinenak ere kontuan izan gabe edo horiek berariaz ahaztuaz; esanahiari formari baino errespetu gehiago agertu gabe eta lege fonetikoak eta usu historiak ere ezagunak ez balira bezala.

Inoiz eztabaidarako gai ere izan behar ez zuen eta hainbat hamarkadatan euskal linguistika diakronikoa oztopatu eta atzeratu duen hipotesiaz adibide esanguratsu bat izateko, ik. Boudak berak 1950ean «harribitxitzat» aurkeztutakoak:

> *ih-i, eh-i* 'facile' (209), *lab-ur* (211), *garb-i* (214), *e-rh-i* (ibid), *oke-l, oke-la* (216), *ag-eri* (ibid), *eg-ur* (217), *nag-i* (ibid), *i-gord-i* (ibid), *ud-a* (218), *(h)ord-i* (219), *e-rd-i* (ibid), *e-tse* (221*), a-tso* (222), *i-tsa-so* (ibid), *sabe-l* (ibid), *e-tsa-i* (ibid), *i-tses* 'bouleversement, cataclysme' (223), *sat-arri* (ibid), *a-tz-o* (ibid), *e-zk-ur* (224), *e-zte-n* (ibid), *zab-ar* (ibid), *uzk-i* (ibid), *e-z-ti* (225), *ze-ze-n* (ibid), *uzt-a* (226), *zita-l* (ibid), *z-ar* (227), *a-tze* (ibid), *e-zpe-l* (229), *i-zpi* (ibid), *o-zpi-n* (ibid), *i-zpor-tu* (ibid), *e-zpa-ra* (ibid), *e-zku-tu* (ibid), *a-zku* (ibid).

Euskarazko hitzak osagai txikiagoetan banatzean morfemen eta erroen inguruan egiten diren proposamenak beren fonotaktikaz dakigunaren aurka doaz; ik. iruzkin laburra Lakarra (2011b)-n. Boudaren «harribitxien» pareko nahi adina bada Castaños (1979) eta Trask (1997)-ko bildumetan, bigarren honetan iruzkin latz bezain egokiz horniturik.

Ehun urte geroago goiko argumentu tipologiko horiek ez ziren oso esanguratsu metodoarekiko ortodoxia handirik gordetzen ez zutenen artean ere: euskarak eta edozein hizkuntza kaukasiarrek baino aditz marketan aberastasun handiagoko hizkuntza polisintetikoak dagoeneko ezagunak dira Ameriketan, eta, bestalde, Australian hizkuntza ergatiboak ugari dira (cf. Dixon 2002); horrenbestez, (nolabaiteko, ez osoko) egiturazko antzekotasun horretatik ez da ahaidetasunik eratortzen XIX. mendearen akabuan erabat nominatibo-akusatibo zen Europan euskara eta georgierarekin egindako moduan.

Lafonek 50en hasierako lan batean (1951-1952) aitortu zuen alorrean artean egindakoak ez zuela frogatzen ustezko ahaidetasuna, ezta eskurik ematen noizbait frogatu ahalko zela pentsatzeko ere: urruti ikusten zuen alorra hamito-semitikoak orduko erdietsi mailatik, esaterako, hain baitziren ezberdin bateko eta besteko fonologia, morfologia eta lexikoa. Zehazkiago mintzatuaz, berezilarientzat inoiz ez dira bi alde izan (euskara : kaukasiera), bospasei edo are gehiago baizik; hots, euskararen «ba(kar)

tasuna» eta —Mitxelenaren 50etako eta 60etako lanez geroz— haren erkaketarako gaitasuna (AE berreraikia izanik funtsean) ezin ezkuta litezke, baten batek nahi balu ere. Ez da horrelako ezer beste alderdian, ordea: «kaukasikoa» berba geografiko hutsa da, ez linguistikoa, eta hizkuntzalaritzari dagokionez —eta badirudi horri dagokiola hizkuntza-ahaidetasunak epaitzea— «kaukasierarik» ez da («balkanierarik» edo «amazonierarik» edo «gineaberrierarik» ere ez den bezala) IEa, semitikoa, austronesioa… eta bestelako familia estandarren pare eta ez antzera. Izatekotan, lau talde ezberdin eta beren arteko lotura genetiko ezagun edo onarpengabeak ditugu: bat hegoaldean (kartvelikoa) eta (gutxienez) hiru iparraldean —ipar-mendebalekoa, ipar-erdialdekoa eta talde genetikoaren izaeratik urrutien den ipar-ekialdekoa—.

Are gehiago (eta okerrago), Kaukaso aldean erabili diren edo oraindik bizi diren eta are gehien ezagutzen diren hizkuntzetarik asko dira kaukasieratzat inork ere hartzen ez dituenak: errusiera, armeniera edo osetiera, hasteko, turkiera edo uzbekiera gero, familia linguistiko ezagun eta estandarrak izateagatik (IE eta turzikoak, hurrenez hurren); orobat, deitura horretatik kanpo gelditu ohi dira, nahiz lurralde horietan lekukotuak izan, hattia, hurrita eta gainerako hizkuntza zahar batzuk. Beste hitzez esateko, «kaukasiar hizkuntza» izateko ez da aski noizbait Kaukasoan hitz egin izana eta ez da beharrezko gainerako hizkuntza kaukasiarrekin lotura genetikoak frogatuak izatea (horrelakorik gabe sailkatu izan dira, ikusi dugunez): nahikoa da inolako talde linguistiko ezagun eta estandarrekoa ez izatea… nahiz eta linguistikoki gainerako «hizkuntza kaukasiarrekin» inolako batasunik (*homologiarik*) frogatzeko modurik ez esperantzarik ez izan, metodo onargarriekin, bederen. Nekez aurki liteke bibliografia linguistikoan hipotesi ahul eta oinarri gabekoagorik, bada, «kaukasikoa» baizen, eta begi-bistakoa da ondorio ezkor hori areagotu baino ezin egin daitekeela delako hizkuntza samalda horri euskara gehitzean; ez ahantz, gainera, «euskara-kaukasiera», «euskara-iberiera» enborraren adarretarik dugula azken batean, eta bigarren honen ahuleziak ere erantsi beharko litzaizkiokeela orain aztertzen ari garen produktuari.[33]

Ustezko lau talde kaukasiarretarik kartvelikoa da hizkuntzalaritza historiko-konparatuaren ohiko metodoekin duela mende erditsu bere familia izaera frogatzea lortu zuen bakarra. Geroztik, hainbat lan izan dira horren barnean lazoaren, mingrelieraren,

33. «Las correspondencias vasco-caucásicas son de orden léxico fundamentalmente (sirvan como muestra vasc. *larri* 'urgido', avar *lerize* 'apurado'; vasco *etxe* 'casa', laz *ca* 'cabaña')» irakurtzen dut harriturik Echenique eta Sánchez-en liburuan (2005: 46-47). Dagoeneko egin diren hainbat ohar alde batera utzirik bi berri erantsiko ditut: 1) hor aipatutako biak «lexikoak» dira (nahiz ez bakarrik) baina ez dakit ze zentzutan jo litezkeen «korrespondentzia» bezala; nolanahi ere, erraxki erakuts liteke ez 'urgido' eta ez 'casa' ez direla hitz horien adierarik zaharrenak, eta horrek ez du laguntzen erkaketaren egokitasuna; 2) «fundamentalmente» izan arren, gutxi bada ere ba ote —dakigunez— hor ez beste inon frogatu gabeko «lexikoa ez den korrespondentziarik»?

svanoaren eta, batez ere, historia lekukotu luzeena duen georgieraren bilakabideaz eta baita aitzin-kartvelikoaz ere —eta Tuitek (2007: 13) dioenez, are XIX. mendearen amaierako aurrekariak ere badira—; dakigularik, berezilari bakar batek ere ez du pentsatu familia honek euskararekin inongo erlazio genetikorik izan lezakeenik, nahiz hango hizkuntzen aztertzaile eta hipotesi zenbaitek IErekin edo/eta nostratikoarekin bai lotu nahi izan (cf. Klimov 1991, Tuite 2007).

Gainerako hiru taldeetarik ipar-ekialdekoa (nakh-daghestania bere baitan hartzen duena) da azterketa deskriptiboan nahiz historikoan atzeratuena; ipar-mendebalekoan eta ipar-erdialdekoan ere, ordea, 50 urte hauetako lanek beren batasun genetikoaz esperantzak eman arren, ez haien arteko, ez gainerako taldeenaz ezin ondoriozta liteke beste hainbeste: euskararekikoak ofiziokoen ikerketan (ez Euskal Herrian zenbaitek saldu nahi izan dutenean) benetako eztabaidarako mahai gainean jartzera ere ez dira iritsi.

Azken 30 urteotan «na-dene-euskara» hipotesia izan da bakarra ipar kaukasiera (ezezagun eta bateraezina, ikusi dugunez) eta euskara bildu dituena… askorekin hobekien aztertutako hegoaldeko kartvelieraz txintik ere esan gabe, eta galera honen ordainetan edo, iberiera, etruskera, buruxaskia, txinera eta hizkuntza na-deneekin batera kokatu nahirik euskara; ez da, beraz, arrazoi pisuzkorik sineskera honen alde (ik. § 2.5.2).[34]

## 2.5. Metodo konparatuaren ustezko alternatibez

> [D]istant comparisons should always be conducted with consideration of the experience available from well-established language families (…) Even if distant comparisons can yield positive results, it should be recognized that languages move on the map, and they move fast. For this reason, the chances of locating homelands and protolanguages with any exactitude are equal to nil. The recent trend of dating linguistic continuities with the help of human genes and archaeology involves a serious misunderstanding of the processes that govern linguistic expansions (Janhunen 2008: 236-7).

34. Interes historiografiko hutsera ere ez da iristen Sarkisian euskaltzain ohorezkoaren euskara eta armenieraren arteko ahaidetasun-hipotesia; azken 130 urteotan ez bide da armeniera IE ez dela dioen beste hizkuntzalaririk. Kontu bitxiagoa, jakina, hori zioena nondikoa zen gogoratuaz. Oraingoan ere, ez dirudi munduan barrena ofizioko armenologoek Sarkisiani kasu handirik egin diotenik. Haren lan asko argitaratu ziren aldizkari berean, kalitate bertsuko baina bateragarri ez ziren euskaro-kaukasistenen alboan, garai hartako argitaratzaileari, itxuraz, arazo ez bihotz-ximikorik sortu gabe.

### *2.5.1. Glotokronologia*

II. Mundu Gerla amaitu eta gutxira, IEarentzat sortu eta mundu osoko hainbat familiatan aurreko mende erdian garatutako ohiko metodo historiko-konparatuak Ipar Ameriketako hizkuntzen azterketan izan zezakeen gaitasun guztia emana zuelakoan, metodo hura gainditu eta ordezkatu asmoz, Morris Swadesh-ek eta beste zenbait hizkuntzalari eta antropologok —Sapirren ikasle askok tartean— garai bertsuan geologian eta gero arkeologian itzelezko aurrerapenak ekarri zituen «$C^{14}$» delakoan jarri zituzten begiak. Hainbat saiotan aldarrikatu zutenez, Ameriketan testu- nahiz azterketa-tradizio urriko hizkuntzen historia ezezagunaren azterketarako haren eredura sortu berri zuten teknikak, glotokronologiak, erdietsiko omen zuen artean metodo estandarrek —ohiko lege fonetikoek eta metodo konparatuak— IEn, semitikoan, uralikoan edo austronesioan eskuratuaren parekorik eskuratzen ez ziena.

100 eta 200 hitzetako «Swadeshen zerrenda» famatuen bi aurkezpenetan biltzen saiatu ziren mundu-mailako erkaketarako kulturalki egoki izan zitekeen oinarrizko lexikoa: izenordainak, erakusleak, zenbaki txikiak, ekintzarik arruntenei dagozkien aditzak, ahaidetasun-hitzak, kolore oinarrizkoenak, adizlagun zenbait… (ik. zerrenda Trask 1996n). Horiek ingelesez emanik, mekanikoki itzuli ohi ziren erkatu nahi ziren hizkuntzetara, gero hauetako «bat etortzeak» ikusi eta kontatu, eta lexiko erretentzio-taula unibertsalen bitartez erkatutako hizkuntzen arteko etenaren data zehatza kalkulatzeko.

Metodo honen aplikazio famatu eta jakingarria egin zuen Tovarrek 1961ean, Swadesh bera, adiskide matematikalari bat eta Bouda, Lafon eta Vycichl-ekin batera, Mitxelena[35] «native speaker» eta editore legez ere lagun harturik: bertan euskara eta zenbait hizkuntza hamito-semitiko (Rifeko eta, Suseko berebereak, egipziera, arabiera, koptoa), kaukasiko (zirkasiera, avara, georgiera) edo paleosiberiar (txuktxiera) erkatu zituzten binaka; hots, ez soilik euskara eta gainerakoak —gehienek usteko genukeenaren aurka—, baizik eta baita enparatuak oro beren artean ere: hots, georgiera arabierarekin, egipziera zaharra txuktxiarekin, etab., benetan beste inongo iturri bibliografikotan nekez aurki litezkeen arabiera-txuktxiera, txuktxiera-georgiera nahiz egipziera-georgiera ere erkatuaz eta, ustez, haien aitzinhizkuntzen (?!) hausturak datatuaz; horrenbestez, inork

35. Ahapeka baino ez bada ere, ezkutaezinak dira azkenak metodoaren baliagarritasunaz eta ezarpenaren hainbat xehetasunez zituen mesfidantza eta zalantzak; ageriago dira hauek Mitxelena (1963) eta (1979b)-n. Janhunen (2008)-n ematen dira zenbait arrazoi glotokronologiaren alde, are lexikotik kanpora fonologiara eta hedatuaz bere esparrua. Alabaina, hitz hori bere adiera literalean hartzen du Janhunenek, eta berariaz ahaidetasun-ikerketak alde batera uzten; are gehiago, bereak dira aldaketa neurtzeko zailtasunei buruzko hainbat gogoeta.

frogatu ez duen (are frogatzen ere saiatu ez den) ustezko jatorrizko batasuna zeharka (ustezko «haustura-dataren» bidez) frogatutzat ematen zen.

Tovarren ondorioen arabera euskararen ahaide hurbilena Sus-ko bereberea omen genuke (% 7,38-10,86 erretentzioa litzatekeelarik haren eta euskararen artean) eta, metodoa jarraikiz, beren etena duela 90-70 mende gertatu zela ondorioztatzen zuelarik; ondoren Rif-eko bereberea —% 6-9,67 eta 95-75 mendetako etena euskararekin; ez da ezer esaten Rifekoarekin hautsi ondoren 5-25 mendetan euskarak Susekoarekin izan omen zuen erlazioaz—, eta horrela euskara eta txuktxierarekiko erkaketara iritsi arte: % 2,08-2,17ko erretentzioa, 135-120 mendeko etena. Ez da erraz ulertzen zergatik euskarak egipzierarekin % 3,35-2,29ko erretentzioa duen (= 110-130 mendeko etena) eta 2.000 edo 3.000 urte beranduagoko haren aldaera den koptoarekin 5,18-6,59koa (= 100-90 mendeko etena).[36]

Euskal Herrira iritsi orduko, glotokronologiak izan zuen kritika latzik bere oinarriez eta balioaz. Hasteko, erretentzio-portzentaia ez da bera hizkuntzen artean, ez eta horietako baten garai batetik beste batera; areago dena, ez da inongo arrazoirik pentsatzeko antzeko aldakortasuna dutenik ere hizkuntzaren modulu guztiek (fonologia, morfologia, lexikoa) garai jakin batean, aurrekoan edo ondokoan. Bestalde, behin eta berriro findu arren, oinarrizko lexikoan etengabeko arazoak gertatzen ziren ezkerreko berben itzulpenarekin eta mailegaketa-arriskuarekin ere (ik. Haarmann 1990 kritika hauen sintesirako).

Baina, hizkuntza historialari gehienentzat larriena zera genuen, saio glotokronologikoen ondorioak nabarmenki okerrak zirela diakronia ezaguneko hizkuntzetan, IEko zenbait azpifamiliatan, esaterako, eslabieran eta germanikoan hasi eta erromanikoan buka: portugalera eta errumaniera VIII. mendean, frantsesa eta italiera XIV.ean eta espainiera eta portugalera XVI.ean banatuak omen, esaterako (datak oro dira onartezinak). Ez da harritzeko, bada, ondoko ahapaldia bezalakoak irakurtzea metodo honen inguruan:

> En conclusion, la glottochronologie nous paraît être une technique mal fondée, fausse et même théoriquement absurde. Et de par sa facilité même —et superficialité— elle nous paraît représenter un danger pour la linguistique contemporaine. (…) Si la pensée est fausse ou absurde, les symboles et les chiffres ne nous permettent pas de la rendre exacte et cohérente en elle-même : ils nous permettent seulement d'être d'une fausseté et d'une absurdité mathématiquement parfaites (Coseriu 1965, *apud* Lakarra 1997b).

---

36. Ez ziren iritsi, ordea, propietate trantsitiboaren bitartez guztien ahaidetasunaren lekuko izan behar zuen aitzinhizkuntzaren etena datatzera.

Ordea, aurrekoak aski eta sobera izanik, gure ustez, glotokronologiaren akatsik larriena besterik da,: kognadoen ezagutzan bertan datza, eginkizunik oinarrizkoenean, alegia. Zergatik *house* : kaśa : še : eče hirukotean ez ditugu bildu behar azken biak eta bai kaśa eta še, beren artean inongo antzik ez hotsik komunean izan ez arren, ia harako gr.-lat. *duo* : arm. *erku* 'bi' Meilletek famatuaren antzera edo Hampen arm. *khirtn* : ing. *sweat* : alban. *dirsë* (1998: 14) bestearen gisara. Hots, oinarrizko lexikoan eta morfologian frogatutako lege fonetiko zehatz eta hertsirik gabe, axaleko antzetan (analogietan) fidatuaz, aliritzian, ez da modurik —ez glotokronologiaren, ez beste ezeren bitartez— deus segurtatzeko eta aitzinhizkuntzara iristeko behar ditugun homologien alerik erdiesteko.

Erants bedi glotokronologoen lanetan ez dela frogak biltzeko saiorik, axaleko antzekotasun-jolas horiezaz landara; ahaidetasuna ez da, beraz, benetan ikertzen ez frogatzen (ik. Mitxelena § 2.10.2 akabuan Boudaren ohiturez); aurretiaz «emana», barneratua edo onartua dator eta horren zenbatekoa (ehunekotan eta mendetan) zehaztu baharra dago, ez besterik. Egia da behin baino gehiagotan direla tamaina txikiegiko morfema edo morfema zatiak ez erabiltzeko eta hoskidetasunak hertsiago pisatzeko deiak, baina hobekuntza horiek —ezinbestekoak diren arren— ez ziren aski inolaz ere.

50 eta 60ko hamarkadan glotokronologiaren aplikazioa bezain ia unibertsalak izan ziren haren aurkako kritikak, eta, hura beheraka zihoan neurrian, hauek azkar zihoazen goraka. Hainbat urte beranduago, *The rise and fall of languages*-en (1997) zera zioen Dixonek labur bezain argi: «Lexicostatistics and glottochronology are still practised in a few odd corners of the world (including Russia, where these methods were introduced in the 1980s, twenty years after being discarded by serious linguists in the West). I am sorry to have to report that one of these corners is in Australia [berak han egiten du lan]» (1997: 36, 5. oh.).

Hara Tovarren[37] erkaketa gailurrenaren emaitzarik seguruenen iruzkin arin bat (Lakarra 1997b-tik laburtua):

1. Eusk. *ni* : S. *nekk(i), nekki:n* : R. *nes, nis*. Oso ahula: *-i* dugularik 2.p.-n ere (eta *-u* pl.eko bietan) *n-* hutsa gelditzen zaigu; VC genuke **en-* batekin arituaz (cf. *ene, eni*).[38]
2. Eusk. *i* : S. *kiyin, kiy*. Ezerezean gelditzen da (1)-eko iruzkinaren ondoren: **khi* batetik abiatuaz ere soilik C- genuke.

---

37. Tovarrentzat ez zen errotiko bereizkuntzarik —Uhlenbeck, Schuchardt eta Trombettirentzat ere ez bezala— aitzinhizkuntzatik hizkuntzara doan loturaren eta mailegaketa bidezkoaren bitartean (cf. Lakarra 2008a).

38. Bender-ek (1969) gutxienez CVC tamaina eskatzen zuen kognadotza ontzat emateko; Campbellek (1973) horrenbesterekin ere metodoak inongo segurtasunik ez zuela erakutsi zuen, berdin ontzat jotzen baititu ahaidetasun seguruak eta bestelakoak, are egiantzarik gabekoak ere.

4. Eusk. *gu* : S. *nekn* : R. *nkwenti*. Kognado segurutzat izatea harrigarria da; aurreko sarreretan esandakoaz gainera, nabarmena da bereberez singularraren gainean eratua dela.
24. Eusk. *au* : S. *guad* : R. *wa*. *Haur*-etik (< **Kaur* ?) abiatu behar dugu, honela CVV edo genukeelarik. Alabaina *-ur* amaiera berezi ahalko bagenu CV baino gutxiago geldituko litzaiguke.
34. Eusk. *itzuli* : R. *emgulii*. Itxuraz hobetu egiten da **e-* batetik abiatuaz, baina hori aurrizki bat dugu; VC (*-ul*) baino ez zaigu erroan gelditzen.
39. Eusk. *etzan* : R. *zen*. CC garbi garbia genuke euskarazkoaren 2. silabako bokalismoak (*-an*, *-in*, *-un*) forma luzeagoa eskatuko ez balu.
89. Eusk. *izar* : S. *agris* : R. *izri*. CC (txistukari-dardarkari) itxuraz.
119. Eusk. *emakume* : S. *tamgart* : R. *tamgart, tamettut, tisedent*. Euskara konposatua izateaz landa, *eme-* mailegu gaskoia dugu (cf. § 3.2.2).
120. Eusk. *aur* : S. *arrau*. VVC dugu; *haur*-etik abiatuaz ez da ulertzen bereberez zergatik galduko zen hasierako herskaria edo hasperena.
121. Eusk. *gizon* : S. *argäz* : R. *argaz*. CC (herskari-txistukari) itxuraz.
165. Eusk. *negar egin* : R. *segoi*. VC genuke bereberez bokalak kontuan hartu ahal balira ere.
168. Eusk. *beltz* : R. *abersan*. Ia CCC (*b-l/r*-txist.) dirudien arren, euskaraz txistukaria atzizkia delarik, bat etortzea CV baino ez da hertsi-hertsian.
172. Eusk. *ori* : S. *aurag* : R. *awereg*. C edo ia VC baino ez da gehienez ere; kontua da kognadoa desagertuko litzatekeela euskarazkoa ezingo balitz *hor*-etik berezi.
173. Eusk. *zaar* : S. *asser* : R. *awessar*. *Zahar*-etik abiatuaz gauzak zaildu egingo bide lirateke (cf. 120), batez ere **zanar* < **zan-or* edo balitz (cf. *zain* eta *azkar* < *haz(i)-gor*).
174. Eusk. *legor* : S. *gar*. Oso ahula da, euskaraz bokalarteko herskaria berankorra baita.
191. Eusk. *ama* : S. *gimmi*. Ez dirudi oso erabilgarri inongo konparaketatarako haur-hizkuntzakoa izanik eta are gutxiago euskara bere *-m* horrekin; bidenabar, C bakarra dugu eta bokalismoak ere ez dirudi egokiegi.
195. Eusk. *soka* : S. *iziker, asgun*. Mailegua da, euskaraz bederen.
207. Eusk. *izen* : S. *isem* : R. *isem*. Orain bereberroz da mailegu argi; eusk., bestalde, bada *uzen* ere.

Hau guztia euskarari beha, ia soilik; zer ez ote genuke ezabatu behar hamitistek berebere hizkeren aldetik aurkitu desegokitasunengatik? (cf. § 2.2.ean Chakerrek Mukarovskyz esanak). Jakina, % 10etik % 3ra (edo are apalago) jaitsi behar dugu eta orduan euskara eta zirkasiera (% 6,62-7,52) edo euskara eta koptoa (% 5,18-6,59) errentagarriago lirateke (nahiz erkaketa horiek ere zenbait akats baduketen…). Azkenik, georgiera eta arabiera, bereberea eta txuktxiera eta gainerako konbinaketa horiek zergatik

ez ote dira inoiz aurkitzen bibliografia linguistikoan eta horrelakoak egiten dituztenak zergatik ez ote dira hizkuntza horietako berezilariak, hobekien aztertu hizkuntza eta hizkuntza-familiei dagokienez bederen? (ik. Hamp § 2.10.2n).[39]

### *2.5.2. Konparaketa masiboa*

Joseph Greenberg hizkuntzalari ospetsuak Ameriketako hizkuntza sailkapena argitaratu zuen 1987an, aurreko hamarkadetan, besteak beste, Australiako, Indo-Pazifikoko eta Afrikako hizkuntzenak burutu ondoren. Aurrekoetan ez bezalako zarata handia sortu zen kontinente osokoak oro, Beringetik Cabo de Hornos bitartekoak, hirutan —aleuto-eskimoa (hau estandarra da lehen eta orain), na-denea (funtsean estandarra, haida lekat) eta amerindiera [dozenaka edo ehunka talde eta familia loturagabe lehen eta orain]— biltzen baitzituen. Aurreko hamarkadaren akabuan argitaratu eta oraindik funtsean indarrean jarraitzen duten Ipar Ameriketako hizkuntza-sailkapen hoberenek (Campbell 1997 eta Mithun 1999renak), hor bertan 60 familiatik gora ezartzen zituela kontuan izanik, ulertzekoa da horrela jazotzea eta harridura eta sinestuezina sortzea hizkuntzalarien artean. Alabaina, zarata hizkuntzalaritzatik kanpokoa ere izan zen —batez ere hortik kanpokoa izan zen, zehatzago—, arkeologia eta genetika ere bildu nahi baitzituen Greenbergek eta haren ikasle Ruhlenek (1993, 1994) sailkapen hirukoitz horren alde.

Lehenago Swadeshena legez, hurrengo urteetan oso maila apaleko hizkuntzalari eta zaletu amateur gehiagok Greenbergen metodologia (edo metodo falta) beste hainbat lurraldetara hedatu nahi izan zuen eta, nola ez, baita Euskal Herrira ere: Sapirren gogoeta tipologiko eta iritzi konparatibo heterodoxo argitaragabe batzuei jarraikiz, na-denea eta sino-tibetera lotu nahi izan ziren lehenik tonu-hizkuntzak izaki —gogora euskararen eta georgieraren erkaketa ergatiboa aitzakia hartuaz, XIX. mende akabuan— eta horiei ondoren Kaukaso Iparraldeko zenbait hizkuntza (kasu, horko ezezagunenak, ez kartvelikoak, ordea) Euskal Herrira ere berehala iritsiaz; hedakunde honetan buruxaskia, etruskera, iberiera eta beste isolatu eta gutxi ezaguturen batzuk ere taldeari erantsi zitzaizkien, zubi edo akueduktuari arku berriak gehitzean haren oinarri-ahulezia are nabarmenago eginaz (cf. § 2.4ren amaieran).

Greenbergen kritikarik gogorrenak *Language*-n zein *International Journal of American Linguistics*-en argitaratu ziren, orduko eta oraingo berezilarien goi-mailako bi

39. Harrigarri da Txillardegik (1977) *Euskera*-ko bere ohar llabur eta aitzinamendu aipagarririk gabekoan Tovar eta gainerakoen lehenagoko lan famatua eta askoz zabalagoa —eta glotokronologiari buruzko bibliografia osoa, jakina— ezagutuko ez balu bezala jokatzea; ik. Mitxelena (1979b)-ko iruzkin labur bezain merezia.

aldizkarietan, alegia. Lehendabizikoan 1988an Campbellek atera zuen iruzkin luze eta gogorrean garbi gelditu zen Greenbergek lege fonetikoak eta berreraiketa konparatzaile ortodoxoa oinarritzat ez erabiltzeak haren saioari edozein sendotasun kendu eta lana era guztietako akatsez josten zuela: morfema-mozketa desegokiak, transkripzio eta letraldaketa, esanahi okerrak, maileguak jatorrizko lexikoa bailiran, hizkuntza-nahasketak —ikertzaile eta hizkuntzen artekoak ez zirenean—, etab. Greenbergen jardunaren estandarrek ofiziokoen apalenak ez zituzten gainditzen. Campbellek bere iruzkinaren hasieran bertan hitzez hitz zioenez, Greenbergen saioak 150 urteko atzerapausoa zekarren amerindiar hizkuntzalaritzan eta linguistika historiko-konparatu orokorrean.[40]

1992. urtean *IJAL*-en, aldiz, hiru berezilari ezagunek bata-bestearen ondotik argiro markatu zutenez, Greenbergen 1987ko liburuan bakoitzak aztertu hizkuntza familiei zegokiena xeheki miatu ondoren, han ez zen inongo aurrerapenik saileko ikerketarako eta bai saioa erabat pitzatzen zuten oinarrizko hainbat huts eta akats; ez zen orduan edo geroago aldeko iruzkin edo erantzunik azaldu.

Greenberg eta bere jarraitzaileak saiatu ziren haren alde erabiltzen Australian edo Afrikan lortu omen zituen garaipenak, baina hauetan ere arazo larriak agertu ziren, lehenago markatuez landa: bantua bezalako familia kontsentsu erabatekoz onartuak haren aurretikoak dira; aldiz, alboratu egin dira australiar «ez-pamanyunga» bezalakoak, oinarri estandar orokorretarik abiatuaz. Egungo egunean Greenbergen sailkapenak gehienez ere erosotasunaren izenean erabiltzen dira —cf. Bowern & Koch (2004) Australiarako eta Nurse & Heine (2000)-an bilduak Afrikarako—, ez oinarrizko aurkikuntza berri eta segururik bertan delako; Indo-Pazifikoa ezda aipatu ere egin ohi (Dixon 1997: 33-34, 3. oh.).

Hizkuntzalaritzako aldizkari eta hizkuntzalaritza historikoko biltzarretan Greenberg eta konparaketa masiboa desagertu ziren 1992az geroztik —Euskal Herrira iritsi baino lehen, alegia—, eta 1995ean McMahon senar-emazteek *Transactions of Philological Society*-rako egin txosten luze eta zehatzean erakutsi zuten ez arkeologiak ez genetikak ere ez ziotela ematen —eta eman ere ezin ziezaioketela— Greenbergi hizkuntza-ahaidetasun eta historiari dagokienez bere esparru propioan ukatzen zitzaion sostengurik.[41]

---

40. Greenbergen lanez eta metodologiaz zen eztabaida epaitzeko, beste eremu linguistiko batean (hizkuntza tibeto-burmetan) aritu —hots, Ameriketako arazo konkretuekin loturarik ez zuen— James Matisoffi eskatu zitzaion txostena 1990eko *Language*-erako; titulu hutsa aski adierazgarria da bere edukin, asmo eta ondorioez: «On megalocomparison».

41. 1990eko hamarkadan euskal aldizkari batean euskara eta kikuyua erkatzera ere iritsi ziren (egile horiek berak eta aldizkari berean izan ziren himalaiera (?) eta Paskuako irlako hizkuntza euskararekin alderatu zituztenak ere); iruzkin baterako ik. Lakarra (1997b) eta, beherago, 29. oharra.

Uniformitarismoak dioskunez, hatsarriak berberak izaki XXI. mendeko euskararenak zein K-a-ko XII.ekoarenak eta baita IV. milurteko uralikoaren edo uto-aztekarenak, jakitekoa bide da konparaketa masiboak (lehenago glotokronologiak bezala) ez duela adituen artean onarpenik inon lortu, edota —goiko Dixonen hitzak gogoan—, lortu duen exkaxa, zuzen-zuzenean alorraren garapen faltari loturik doala. Ez bata eta ez bestea ezin izan daitezke ez eredugarri eta ezta erakargarri ere euskalaritzan (cf. Thomason 1993).[42] Noski, hizkuntza isolatuetan ere argudiaketa berbera denez, ez bide letorke gaizki, bada, aitzinatuagoen jokamoduari lotzea.

## 2.6. Europera zaharra[43]

Gure ikerketen egoera eta egilearen izena beste alor batzuetan kontuan izanik, atseginez hartu zen guztion artean 1994ko *TPS*-n Th. Vennemann-en (V) «Linguistic Reconstruction in the context of European Prehistory» argitaratu izana. Artikuluak zuzen-zuzenean ukitzen gaitu euskalariok, batez ere bertako «§ 5. The agglutinating structure of the language of the Old European [= Europera Zaharra (EZ)] toponymy. § 6. The non-IE character of the language of the O.E. toponymy. § 7. Grammatical sketch of the language of the O.E. toponymy» eta, batez ere, «§ 8. Structural and substantive similarities between the language of the O.E. toponymy and Basque», «§ 9. The origin of the language of the O.E. toponymy» atalek. Antzinako europar hidronimia ukitzen duten beste zati batzuek eta Kraheren teoriaren kritikak ere badute AEren egitura eta euskararen iraganarekiko ideiarik, hori baita V-ren teoriaren oinarri.

Ikuspegi estandarretik asko urrunduaz —Europan ezagutu hizkuntza IEren dialektalizazio aurreko IEren garairik zaharrenetiko geruza onomastikotzat zeukaten H. Kraheren (1963) eta bere jarraitzaile Tovar (1977), Schmid (1987) eta Villar-en (1991) ideietarik guztiz bereizi—, V-k (*Europa Vasconica-Europa Semitica* bere bilduma erraldoian bezala) Erteuropako antzinako hidronimia AErekin bat datorren hizkuntza stock bati lotua dela erakutsi nahi zuen, euskaldunak ginelarik IE-aurreko Europaren oinordeko bakarrak. Haren ustez, K.a.-ko X. milurtekoaren inguruan ba omen zen hedadura erraldoiko hizkuntza-familia bat, izotzetik kanpora zen ia Europa osoa beteaz

42. Ezin ahantz amerindieraren ondorengo Greenbergen asmazioa (Euroasiatikoa: IE + uralikoa + semitikoa + makro-altaikoa +…); ik. Georgek eta Vovinek *Diachronica*-n (20: 2003 eta 22: 2005) egin iruzkinak. Georgen (esk.) uraloaltaikoaren asmakuntzari buruzkoa erabilgarri da atal horretan ere (§ 2.7).

43. Zabalago, Lakarra (1996) eta (2013d), eta ik. orobat De Hoz (2011)-ko kritika, Udolphen (2013) bildumako hainbat lan eta Georg-en iruzkina; lehenago Kitson (1996) eta (1997).

eta horren ondoko moderno bakarrak (euskarak) Bizkaiko Golkoaren inguruetan iraun omen du; hortik egileak delako familia horri «Vasconic» deitu izana.

Kraheri hidronimia horren egitura morfologiko konplexua eta are bere hedadura geografikoa aurkitu izana ere aitortu arren, V-k ez ditu haren ondorio nagusiak onartzen, h.d. [1] ez IE izaera, nahiz erroena nahiz termino hidronimikoen eraketa moduarena, [2] ezta delako hizkuntza hori IE hizkuntza berezia, aitzin-IE bera edo tarteko geruza (mendebaleko IE), italiko, zeltiko, germaniko, baltiko, ilirio eta, are, partez eslabieraren ahaide dena eta haiekin ezaugarri lexiko eta gramatikalak partekatzen dituena eta, [3] bere egitura eta semantikazko arkaismoa dela eta delako hidronimia honek K.a.-ko II. milurtekoa baino lehen sortua behar zuen izan.

Haren ustez, EZko toponimia ez zela IE argiro finkaturik zuelakoan, aipatu hidronimia hortako hizkuntza euskararen antzekoa zela erakusteko ezaugarri fonologiko eta gramatikalak biltzen saiatzen da, haren ikuspegi osoa eskainiaz: /a/ asko —batez ere hitz akabuan, euskarazko artikulua bailitzan (!)—, /h/-ren distribuzio «askea», euskarak aspaldi izan omen zituen *muta cum liquida* taldeak (alabaina, lekukotasun zaharretan saihestu eta soilik azken mendeetan lekukotzen dira), hasierako azentua, atzizkiak, SOV hurrenkera…[44]

V-k proposatu inbentario fonologikoan 5 bokal eta 3 diptongo genituzke, azken hauek ozenen bokalizazioaren ondorioz. Ez du luze/labur oposaketarik onartzen, Krahek eta haren jarraitzaileek egin bezala; bokal luzeak, aldiz, EZ IEren egiturara egokitzean sortuak ziratekeen.

Prozesu honetan IEn fonemaz beherako aldaerak (alofonoak) fonema bilakatu omen ziren modu ezberdinez azentuaren eraginez, usu ablaut-itxurak emanaz. IEk geminaturik ez zuenez salbuespenak salbuespen, hidronimoetako hizkuntzak kontsonanteetan beharbada luze/labur oposaketa izan omen zuen, baina IEra igarotzean neutralizatu zelarik; V-k aitortzen duenez, ez omen du horren arrastorik aurkitu. EZren kontsonante inbentarioan 6 herskari kokatzen ditu («dela ahotsaz, dela tentsioaz, dela bien bidez bereziak»: *p, b, t, d, k, g*), txistukari igurzkari ahoskabe bakarra (*s*), bi sudurkari (*m, n*, belar aurreko aldaera asimilatu bat gainera) eta bi ozen (*l, r*) gehi *j, w* glideak. Ez omen da segurtasunik ezpainalbeolare ahoskabeaz, bokal aurreko *su-* eta antzekoak izanik *ku-* (Cc) ere izan baitzitekeen. Beste kontsonante gehiago ere izan zitezkeen baina ez omen dute arrasto aski utzi haiek berreraiki ahal izateko. *f, h, q* igurzkari ez-txistukariak ez omen ziren EZren inbentarioan —nahiz Erteuropako hidronimian ugari izan— eta, V-k

44. Ondoko zenbait lanetan Europa osoko hainbat toponimoren etimologiak aurkeztu zituen, baita bere hiriaren izena ere, *Munchen* < eus. *muin* ere (*m-*, *-n-* > *-*V > *-n* eta guzti), lat. *Monaco* ezaguna bazterturik (!), etab.

azaltzen duenez, ez omen zitzaizkion zor germanikoaren kontsonante-eszisioari baina K.a.-ko II. milurtekoko substratu paleo-italikoari.

V-ren ustez, hizkuntza eransle-atzizkibera zela onartuaz, buru-azken (XV, SOV) zatekeen hitz-hurrenkera aurre-espezifikatzailearekin, turkiera eta japoniera legez, erro-atzizki ordena morfologikoarekin armonikoa den ordena sintaktiko bakarra hori baita. EZren ordena aurre-espezifikatzaileak kontinenteko zeltak horrela gorde zezan eragin omen zuen —dravidierak Indiako IE hizkuntzetan legetxez, hain zuzen—, baina ez irletako zelta post-espezifikatzailean.

V-ren aburuz, orain arteko ohar eta gertakariak azaltzeko biderik errazena EZko eta Europa Hegoaldeko hizkuntzak (etruskiera salbu) erlazionaturik direla pentsatzea litzateke, eta euskara Liguria ere barne hartu omen zuen talde mediterranear homogeneo baten parte litzateke.

Talde horrek euskara eta iberieraren lurraldeez landa, Frantzia Iparraldea, Herbehereak, Britaniar irlak («Atlantic fringe» delakoa salbu), Austria, Alemania, Eskandinavia (iparraldeko lurraldeak lekat), Balkanen iparra, Baltikoa eta hego eta mendebaleko lurralde eslaboak beteko zituen IEen zabalkundea baino lehen. Euskaldunak ez zetozkeen Afrikatik edo Kaukasotik inoiz pentsatu bezala, baizik eta haiek ziratekeen Europa mendebal guztiz indoeuropartuan beren nortasuna gorde omen zuten jatorrizko europar bakarrak.

V-ren artikulua tentuz irakurriaz ez da bertan ikusten gure alorrerako itxarongo genukeen aurrerapen handirik; haren berreraiketa linguistikoa ez dator bat alderdi garrantzitsuetan AEren egituraz dakigunarekin edo jakin dezakegunarekin, eta, beraz, nekez lot ditzakegu genetikoki Europera Zaharra eta euskara.

V-ren analisi eta ondorioetan AEren berreraiketari dagokionez gertakari seguruak (hauetariko zenbait V-k «atzendu» egiten ditu) eta hipotesi egiantzekotasun handiko eta urrikoak bereizi beharra dago, zaila baita haren ondorio askorekin ados izatea. V-k burutu EZren berreraiketak ez ditu Hampen (v. § 2.10.2) praxi okerraren aurkako iragazki gehienak gainditzen eta ezin da mantendu AEz eta euskararen eboluzioari buruz agertzen dituen ideien gainean. Diakronista bezala itxaroten dugunaren aurka, V-ren teoriek ez dute egungo berreraiketa metodo eta hurbilketen benetako arazo ezagun edo ezezagunik konpontzen, edota ez dute erantzuten alderdi horiezaz bibliografian aurkeztu den galdera bakar bat ere eta, are gehiago, ez dirudi egileak horrelakorik egiteko prest dagoenik euskararen datuetarik abiatuaz (edo horien analisi egokiagoen bidez); prest da, aldiz —behar izanez gero, bistako manipulazioak ere tarteko direlarik—, hain oinarri exkaxeko bere helburu erraldoien alde edozer erabiltzeko amateur nekaezin bat bailitzan, AEri dagokionez behintzat.

V-k iberieraren eta euskararen arteko antzekotasun fonologikoak aipatzen ditu, baina «ahantziaz» AEko hasperena edo tentsio-oposaketa bezalako ezberdintasun

nabarmenak eta berezilarien iritziaren aurka —eta euskarak iberiera deszifratzeko eman lezakeen laguntza urria kontuan izan gabe— frogatutzat aurkezten du bi hizkuntzen ahaidetasuna; euskara modernoko datuak ere nahi bezala manipulatzen ditu —EZrako berak aldarrikatutik gertuago ager daitezen— *a* eta V- silabak, AEn ez /p/, ez /m/ eta ez /r-, R-/-rik ez zela «ahazten» du, /h/ gordetzen duten dialekto modernoetan «bariazio librean» dela baieztatzen du (?!) eta inoiz izan ez diren eta inongo arrastorik utzi ez duten laringal-erorketak edo ahostun / ahoskabe bikoteak defendatzen ditu; haren egitura-proposamena silaba, erro eta hitzarentzat euskara zaharrean desegokia da baina, batez ere, hain nasaia non edozein etimologia euskararen bidez justifikatzeko aukera ematen dion, batez ere sasi-zatiketa morfematikoak, euskal morfema berantiarren analisi desegokiak, toponimiaren datuen ezezagutza edo *-a* artikuluaren zahartasuna bezalako trikimailuak lagun.

Amaitzeko: ez da ikusten zergatik AEk edo aitzin-Vasconic delakoak izan behar zuen *r-* edo *Cr-* (> *ø-*) sail bat, ez bada horrela horiek ez balira «euskara indoeuropartuak», IE ikertzaileek oraindik azaldu gabeko arazo guztiak azalduko omen lituzkeena. Kontua da hori guztia euskalarioi ez zaigula batere axola eta, beharbada, IE ikertzaileek ere gogoratuko liokete V-ri aurreko manipulazio eta asmakeria guztia ez dela beharrezko: aski zukeen EZ hidronimiako hizkuntza IE dela Krahek eta ia gainerako guztiek lehen eta orain pentsatu (eta zehazki azaldu) bezala. Kitsonek «typologically minded» deitu V-ren berreraiketak ez du inongo benetako arazorik konpontzen euskararen (aurre)historiaren ikerketan —ezta, dirudienez (cf. Kitson 1996) EZrenean ere— eta hori da, ikusi dugunez, hizkuntza berreraiketa baten helburu eta interes bakarra.

Beharbada norbaitentzat atsegin eta pozgarri gerta liteke antzina-antzinako *Vasconic* horretatik dirauen etnia bakarra izatea V-k proposatu (edo oparitu) bezala, baina —gogoratuaz Colón aurreko Amerika edo erromatar-aurreko Hispania, XIX. mendeko Kaukasoa, edo XX.eko Ginea Berria (cf. Tovar 1987)— europar mendebal (glaziar aurreko zein atzekoa) ñabarragoa eta hizkuntza eta kultura askoz hornitua imajinatzea hobetsiko nuke; nolanahi ere, hizkuntzalari bezala haren proba, metodo, argudio eta ondorioak onartezinak egiten zaizkigularik ezin jarraitu V-ri bere europar iragan asmaturako bidaian: EZrekin V-k egin analisia ez da aski euskararen iraganeko garai ezberdinak edo zaharragoak berreskuratzeko, edota euskarari artean ezezagun zitzaizkigun familiako kide berriak hurbiltzeko.[45]

45. Lehen ere bazen euskara paneuropartzat aurkezten zuen teoriarik (cf. Estornes Lasa 1967 eta, hein batean, gorago aipatu Krutwig jauna) eta Euskal Herrian Vennemannen iritziak ez ziren eta ez dira ofiziokoengandik kanpokoen artean gaizki hartuak, h.d., hizkuntzen historia —ala euskararena soilik?— ez hizkuntza-datuen arabera baina bestelakoen bitartez (orain, usuenik, genetikoen) eta, komeniz gero, haien (hizkuntzazkoen) kontra ere egingo luketenen artean.

Itxarotekoa zenez, berezilariek Vennemanni emandako erantzuna ez zen izan aurreko hamarkadetan haren lan sinkroniko-tipologiko bikainei emandakoaren antzekoa, urrutitik ere. Hizkuntzalari gehienek —batez ere gaia inori baino gehiago zegokien IElariek— ez zuten proposamen berria interesgarritzat hartu eta ez zuten iruzkindu ez erabili aldizkari akademiko nagusietan. Ordea, lan horretara jarri ziren gutxiek berehalakoan markatu zuten Vennemannen berrikuntzek ez zekartela aitzinamendu onargarririk beren alorrean: 1994ko *TPS*-ko aipatu lan hartatik bi urte geroago aldizkari berean Kitsonek erakutsi zuen Britainia Handiko hidronimiak zein Erteuropakoak, —eta hurrengo urteko beste saio batean baita IE herriak izandako ia lurralde orotakoak ere, Anatolia, India, eta enparatuak barne— oso ongi azaltzen zirela IE zaharraren fonologia, morfologia eta lexikoaren bidez eta, beraz, Vennemannen analisiak akatsez josiak, arbitrarioak eta desegokiak izateaz gainera, batere oinarri eta premia gabeak zirela, orobat.

Hipotesiaren IE alderdiari dagokionaz landa, horrela izan da gero Vennemannek tartean sartu semitikoari buruzkoaren patua ere (cf. Baldi & Page 2006 eta, batez ere, Udolph (arg.) 2013). Polomé —*Journal of Indo-European Studies*-eko liburu-iruzkinetan, bidenabar— enparatuak baino laburrago izan zen, ez ilunago, ordea: «A new theory, advanced by Theo Vennemann (1993, 1994a, 1994b, 1995), assumes that Basque is the substrate of Old Europe. This seems to be elucidating the unknown by the even more obscure!» (1999: 52). Antzera lanaren bukaeran ere: «Vennemann is undoubtedly a brilliant linguist whom I deeply admire, but in this case, he unfortunately seems to have completely missed the boat!» (1999: 55).[46]

Zorigaitzez —nahiz haren hizkuntza-unibertsalei buruzko 60 eta 70eko lanak edo ondoko silabari buruzkoak oraindik orain oso jakingarri eta baliagarriak diren—, euskalariok ezin esan genezake gauza hoberik (cf. Lakarra 1996, 2013d): euskararen datuekin eta haiei buruzko analisiekin —dagoeneko aipatu «artikulu» eta «hasperen librea»-rekin, demagun— egindako erabilera guztiz arbitrarioa da eta, usu, dakigun edo dakikegun guztiaren aurkakoa; berari ongi datorkionean Mitxelenaren berreraiketari lotzen zaio, «ahazturik» hori K.a.-ko I. milurtearen akabukoa edo are geroagokoa dela

46. Nahiz Echeniquek (2012, 2016) Vennemanek esandakoak sinesten dituela dirudien, ez du orrialdeotan eztabaidatu datu eta argudioez bestelakorik biltzen. Echenique eta Sánchez-en (2005: 34) hitzak are borobil eta ozenagoak dira: «Vennemann sostiene con argumentos renovadores que la lengua vasca actual es una reliquia de la antigua familia paleo-vasca, perteneciente al europeo antiguo», horren ondotik —cf. Janhunen (2008) § 2.1en IE aurreko aitzinhizkuntzez—, «Hay que unir a ello los resultados de la fecunda investigación que la filología vasca…» gehitzen delarik inongo zubirik gabe. Lotura hori, niri behintzat, ez zait batere logiko, egingarri eta desiragarri begitantzen.

(EBZ = K.o.-ko V-VI. mendea, cf. hemen § 5) eta zenbat eta gorago egin, hainbat eta urrutiago dela eredu «klasiko» horretatik bere *Vasconic* delakoaren eredutzat darabilen AEren egitura (ik. § 4 osoa eta, batez ere, § 4.5). Haren eta Mitxelenaren berreraiketen artean diren 8-10 bat mila urteek ez dute inolako erkaketa-aukerarik eskaintzen; alabaina, badakigu —dagoeneko aipatu akats, huts eta jokutriak kanpora ere— ikerketak aurrera egin ahala, elkarrengandik urrunago direla eta, halaber, Vennemannen ereduak euskararen bilakaera aztertzeko duen desegokitasun markagarria are nabarmenago egiten dela; ik. § 2.10.2ko oharrak aitzinhizkuntzen eta familia zaharren hedaduraz.[47]

### 2.7. Uraloaltaiko hedatua

1992an «Euskal Ikasketetan» onartutako tesi bat oinarri zuelarik 1996an argitaratu zuen Michel Morvan-ek *Les origines linguistiques du basque* zeritzon liburua. Horretan tesian baino askozaz ezkutuago da euskara eta hizkuntza uralo-altaikoen[48] arteko ahaidetasunaren aldarrikapena (originaleko «… : *l'ouralo-altaïque*» desagertua da tituluaren akaburantz), baina garai horretako zein beranduagoko lanetan ere —haren *Dictionnaire Etymologique Basque* delakoan, demagun— egileak noiznahi jotzen du euskal hitzak zein hizkuntza paleosiberiarrekin, zein japoniera eta mongolierarekin eta are dravidikoarekin edo enparatuekin erkatzera, hori balitz bezala etimologia-bide egoki bakarra:

---

47. Dirudienez V-renak euskalaritzan egindakoak badu antzekorik beste tradizio garatuago batzuetan ere: «The comparative method is a relatively well-defined tool that has been employed successfully in the classification of languages for two centuries. *In recent years there have been several proposals about the classification of the Austronesian languages that violate basic principles of method. Because some of these have been advanced by scholars who are well-established in other branches of linguistics they have acquired an influence that is out of proportion to their scientific merit.*» (Blust 2015: abstract; etzanak nireak dira [JAL]). Blusten asmoa zera da: «My primary goal in this paper is to examine two recent claims about the classification of the Austronesian (AN) languages, and to show that these assertions fall outside the mainstream of historical linguistic research for very specific reasons, namely that they achieve their results only by appealing to illicit extensions of the comparative method such as those described under 1.5». Ik. 6. oh. eta baita § 2.9.2 euskara IEren ahaide egiten duen Blevinsen beraren oraintsuagoko proposamena ere.

48. Azken hamarkada hauetan, hizkuntzalari gehienen ustez, ez da *mikroaltaiko*-rik (turzikoa, mongolikoa eta tungusha) eta gutxiago *makroaltaiko*-rik (aurrekoak gehi koreera eta japoniera); zer esan *uralo-altaiko*-az (aurrekoak gehi finougrioa, saamia… hots, aspalditik ohartu —XVIII. mendetik, bederen— eta hobekienetarik aztertu familia ezagunaz! (ik. D. Abondolo (arg.), *The Uralic Languages* 2006 [1998], London & New York, eta edozein eskuliburu, bai hizkuntzalaritza historikoaz eta baita hizkuntzalaritzaren historiaz ere. Oinarrizko «xehetasunok» nahikoa eta sobera izan beharko luketen arren, ez dute inolaz ere Morvanen jardunaren arazo-zerrenda agortzen.

_abagune_ (1800) Occasion. De _abegi_ «accueil»? avec suffixe _-gune_ «lieu, moment»?
_adin_ (1571) Age. Peut-être apparenté à _adi_.
_afari/auhari_ (1234) Souper. De _aho_ «bouche» ou _gau_ «nuit, soir». Le /f/ n'existait pas en proto-basque.
_ahaide_ (1545) Parent. De _aho_ «bouche» et _ide_ «semblable».
_ardo_ (XIe s.) Vin. De _ardao_ < *_ardano_. Apparenté au dravidien _ardn_ «baie». Cf. aussi _ardantza_.
_bildur_ (1252, Don Bildur) Peur. De _bil-d_ «forme ronde». Le peureux se pelotonne. Variante _beldur_.
_doilor_ (1562) Mesquin, mal, bas. De l'espagnol _dolor_ «douleur, mal».
_ez_ Non. Du proto-basque *_ese_. Apparenté au vieux-mongol _ese_ «id.», baoan _se_ «id.», toungouse _ehe_ «id.». Variantes _ze, eh-, e-_.
_ezker_ (979) Gauche. Terme pré-latin pyrénéen. Peut-être apparenté à _esku_ «main (droite)». De *_esku-oker_ «main tordue»(?).
_ezki_ (1000) Tilleul. De *_ezk-_ «arbre»? Cf. _ezkur_ «gland».
_ezne_ (Xe s.) Lait. Vieux terme eurasien. La forme _zenbera_ «lait caillé, fromage mou» indique une base *_ezen(e)_ apparentée au caucasien du nord-est _zen_ «lait» et au mongol _sün, üsün, üsn_ «id.».
_garratz_ (1234) Amer, dur. De la racine *_garr-_ «dur». Apparenté au lapon (same) _garas, garrat_ «dur».
_gihar_ (1562) Maigre de la viande. Apparenté à _ihar_ «sec».
_habuin_ (préhist.) Bave, écume. De _*habun_ < proto-basque *_gabun_. Apparenté à l'ouralien *_hab-_ «id.», au mandchou _xafun_ «écume», au yénisséien _hapar, hapur_ «id.», à l'eskimo _qapu(k)_ «id.», du pré-indoeuropéen *_gab- kab-_ «gonfler, enfler, convexe». Cette parenté est sûre à 100 %. [sic !]
_hain_ (XVe s.) Tant. De _haen_ < _haren_.
_higitu_ (1571) Bouger. Voir _mugitu_.
_ide_ (XIVe s.) Semblable. Peut-être du latin _idem_.
_ile_ (XIVe s.) Cheveu. Cp. dravidien _ile_ «cheveu, fil».
_indar_ (XVIe s.) Force. Obscur. Cf. hittite _innara_ «id.».
_ogen_ (1388) Faute, péché, offense. Obscur.
_ontzi_ (1024) Récipient creux. Obscur. Cp. finnois _onsi_ «id.».
_sabai_ (XVIIIe s.) Grenier, plafond, ciel. De *_sab-_ < *_gab-_ (voir _sabel_).
_sabel_ (1100) Ventre. Du pré-basque *_gabel_ < *_gab-_ «forme concave ou convexe».
_sagar_ (1089) Pomme. Peut-être apparenté à l'arabe _sagar_ «arbre».
_ulertu_ (XVIe s.) Comprendre. De l'espagnol _oler_ «sentir».
_zezen_ (inscription _Sesenco_ à Soria) Taureau. Obscur.

Ez da iruzkinetan luzatu beharrik —ik. Gorrotxategi & Lakarra (2001) egilearen aurreko saio batzuetarako—, erkaketok beren buruaz aski garbi mintzo baitira: euskal

erro eta morfemen fonotaktika, horien historia ezagunak, mailegu garbien jatorriak, hots-lege oinarrizkoenak, 50 urte edo gehiagoko osasun oneko etimologiak eta euskal gramatika historikoa oro har «ahanzteak» ez dakar joko eta jolasetarako atsegin handirik.

Bestalde, Euskal Herritik landa, ofiziokoen artean inor ez da haietaz ohartu uralieraren, japonieraren, mongolieraren, dravidieraren, hizkuntza paleo-siberiarren eta, hitz batez, ezeren historia estandarra egiterakoan, nahiz hipotesi genetikoak, nahiz mailegu solteak zein hizkuntza-elkarteak eraikitzeko orduan. Janhunen, Krishnamurti, Frellesvig & Whitman edo Vajda-ren lanetan edo horien kideenetan nekez aurkituko da Morvan jaunaren laudorio ez aipurik, nahiz honen idazkiek ikerketa alor horiek asko aldaraziko lituzketen… egiantzekotasun nimiñoeneko amets izatera irits balitez. [49]

Euskalariok ez dugu ezagutzen euskararen egitura historikoan zein historiaurrekoan, —fonologian, morfologian, sintaxian zein lexikoan— «ahaidetasunon» eta analogion bitartez argitu den ezer. Labur esateko, originalik (hitz honen adierarik okerrenean) asko eta onik gutxi du Morvanen uztak —modernitatearen, Interneten eta frikien garaian usuegi gertatu bezala— eta, gainera, alde batzuk eta besteak ez datoz inoiz bat.[50]

---

49. Izan, bada A. Aikio-ren iruzkin labur eta aski latza *Finnisch-Ugrische Forschungen* 2004n (horren berri J. Manterolari eskerrak izan dut); alor horretatik urrutien garenoi ere ez zaigu asko kostatzen ulertzea diakronista uralistak askozaz arduratuagoak eta interesatuagoak direla Marcantonio eta bere kide eta jarraitzaileen jardunaz —familia uralikorik (eta are IErik ere) ez dela aldarrikatzen baitzuten— ezen ez haien hizkuntz(ar)en eta euskararen arteko erlazio genetiko eta are historikoagatik baino. Bestalde, Monsieur Morvanen lanetan ez da haien mendeotako garapenaren berri handirik islatzen —cf. Abandoloren liburuko bibliografia edota, zehazki, Janhunen-en ekoizpenak, esaterako—; beharbada egilearen apaltasunari lotua izan liteke (?). Zorionez, interesik duten euskalarientzat ere bakoitzean errazago da uraliar diakroniazko oinarrizko ezagutza lortzea, Monsieur Morvanen badaezpadako laguntzarik gabe ere.

50. Duela hiruzpalau urte, Jaime Martin delako (doktore?) madrildar bat etorri zitzaigun Euskal Herrira —Unibertsitatera ez, baizik eta bertoko zenbait hedabidetara— aurrean jar zekikeonari azaltzera euskara Sahara hegoaldean mintzo diren hizkuntza dogonen familiako dela. Ez zitzaiola antza itxaroten zuen harrerarik egin eta berriro itzuli zen bere bidetik, beharbada, *Journal of African Languages and Linguistics, Studies in African Languages, Journal of West African Languages, Diachronica* edo horrelakoren baterako idaztera guri (?) kontatu nahi ziguna.

Dogon hizkuntzak sailkapen lanetarako berez aski gora den Afrikako hizkuntzen zailtasun-ertainetik are gorago dira (Greenberg 1963 baino lehenagotik ezagun denez), baina horrek ez zuen batere atzeratu gure madrildarra. Ez naiz seguru, aldiz, Martín jaunak eta bere Bilboko medioetako adiskideek —hizkuntz konparazioaren oinarriak ez ezagutzeaz landa— ezagutzen ote duten Michigan Universityko Jeffrey Heath irakasle eta ikertzaile bikaina: Australiako hainbat hizkuntza, Afrikako beste ez gutxi (Marokoko arabiera, bereberea eta Mali inguruko hizkuntzak, bereziki)… eta inoiz euskara ere aztertzeaz landa —ik. *ASJU* 1972, *CLS* 1974 eta 1977ko *Festschrift J. Bilbao*, gutxienez—, beharbada munduan barrena dogon hizkuntzak

## 2.8. Paleosardinieraz eta euskaraz[51]

2010ean Gruyter etxeak Eduardo Blasco Ferreren (= B.F.) *Paleosardo. Le radici linguistiche della Sardegna neolítica* atera zuen *ZfRPh*-ren Gehigarrietan, eta aurreko eta ondoko urteetan ere egileak *Romance Philology, JIES* edo *ZfRPh* bezalako aldizkarietan argitaratu zituen gai beraren inguruan hainbat artikulu. Lan horietan guztietan, abiatuaz Sardiniako zenbait alderditan den IE eta latin-aurreko substratu ugarian (paleosardinieran: PS) oinarrituaz, B.F.k lau geruza edo osagai berreraiki uste ditu irlaren historiaurre linguistikoan: «Paleobasco (AE), Iberico, Periindoeuropeo y Paleoindeuropeo» (135) eta horien artean «la componente piú densa e vistosa nei repertorio toponomastico sardo e quella PB [AE]» (137) ondorioztatzen du ondoriorik garrantzitsuena legez. Ondorengo oharretan B.F.ren liburuko atal zenbait iruzkinduko dut laburki, B.F.ren datu zein analisiez zehaztasun osoz aritzekotan orain eta hemen egin ezin dezakedan monografia luze bat burutu beharko bainuke. Hiru gai nagusietarik (AE, PS eta metodo gonbaratua) bigarrena ia erabat ezezagun zaidanez gero, lehenbizikotik abiatuko naiz nire jardunean, bide batez metodo konparatuarenetik ere zerbait gehituaz.

1. B.F.k (115) *-ake* atzizkia euskarazko (E) *-ak*[52] batez azaltzen du. Alabaina, ezaguna da bigarrena 3. graduko artikuluaren (< erakuslearen) gainean garatua dela: *gizonak* < **gizon-*hak.* Horrenbestez, atzizkia K.o.-ko VIII. mendeaz geroztikoa dugu (cf. 140. oh.), oraindik XI.ean *-h(e)a* formak direlarik. Bestalde, *-ak* (nahiz < **ha-ga)*, hasperenik gabe, gainerako atzizki oro legez. -CV > -V aldaketa, akabuan gelditu kontsonantearen ahoskabetzearekin, ez da soilik akitaniera-ondoko baizik eta oraindik usuko mailegu latin-erromantzetikoetan eta baita Antzinate berantiarrean zein Erdi Aro goiztiarreko

---

hobekienik ezagutzen dituen ikertzailea bide dugu; haren web orrian ikus litezke egileak prestaturiko horietako hainbaten gramatikak eta hiztegiak. Agian hizkuntz esperientzia hain zabaleko persona baten ezagutza egitea ondo letorkieke euskara eta dogona lotu nahi dituztenei; gaztigatu beharra dut, ordea, Heath irakasleari ez zaiola burutik igaro euskara eta delako hizkuntza horiek elkartzea (agerian, bederen), ez genetikoki, ez historikoki: zergatik ote?

51. Lakarra (2013c)-ren bertsio laburtu eta moldatua; Blasco Ferrer *et al.* (arg.) (2013) agertu zenetik, bi erromanista handiren iruzkinak ezagutzen ditut: Wolfenak (guztiz kontrakoa) eta Loporcarorena (ilunagoa baina kontrakoa orobat). Elexpuru jaunak ez dio gezurrik arestian ateratako liburuan hura ez dela berezilarientzat idatzia ozenki aitortuaz; ez du, beraz, harekin hemen denbora galtzea merezi.

52. Wolf-ek (2011: 601) B.F.k euskarazko zenbait atzizkiz esandakoak iruzkinduaz markatu du «Il faut le dire tout net : l'assertion de B.[F.] qu'il y aurait en basque, comme en sarde, des suffixes toponymiques *-ai, -ei, -oi* "per indicare significati di "appartenenza" e di "ricchezza di plante e alberi"", est dénuée de tout fondement». Antzera *-tz*-ren iruzkinaz (B.F. 117), ez baita *-tza*-ren aldaera berantiarra baizik.

hitz-eraketan gertatzen diren aldaketa usukoenetarik, aditz-morfologian ere islarik duelarik: _*duda_ ‘habeo’ > _dut_ / _duda-la, duda-n_.

2. B.F.k (104) E _odol_ darabil, edo hobe, (Lakarra 1995hh) proposatu *_dol_ —cf. _*dar_ > _adar_, _*dats_ > _adats_, _*nin_ > _ihin-tz_, _*nol_ > _ohol_ ‘tabla’, etab.— _Dodoliai_-ren [«semplificata in _Dolai_»] jatorri bezala; kolore izen hori «rosso sangue, scuro» (ibid) «denotante l’intensità cromatica delle terre argillose, trachitiche o di acque con sedimenti dello stesso colore, compare ovunque nella toponomastica basca, europea ed extraeuropea» sardinierazko latinetiko beste eraketa batzuetan ere agertzen omen delarik.[53]

Baldin eta _*dol_ eta _gorri_-k ‘gorri’ adierazi izan balute (ik. beherago), ez dakigu zergatik 2.a euskal copus toponimikoan hain ezagun den eta 1.aren arrastorik ez den euskal toponimia zahar edo berrian. Aurrekoak AE / PS lotura hitzotarako susmagarri egiten zuen eta are susmagarriago bilakatzen da *_dol_ zein _odol_-entzat kide berriak biltzean: hots, _jori_ eta, beharbada _oskol_ eta _ozkol_ buruan eta, are seguruago _erori_, _idol_ eta _olde_ plazaratuaz. _Erori_-ri doakionez, nahiz kausatibotik atera (_*e-ra-(d)ol-i_), nahiz alomorfo berankor (AEM) batetik —_*d-_ > _l-_ aldaketarekin (_*lol_ > *_eloli_)—, _*dol_ erroarekiko lotura edo ‘jausi’ semantemarekikoa argi gelditzen da. Horrenbestez, badirudi AEZko _*dol_ erroa ez odolaren koloreari baizik horren beste propietate bati dagokiola, hots, grabedadearen menpe izatearena, alegia. Sardinierazko hitzekiko edozein erlazio historiko bazter liteke eta homofoniatzat hartu, gehienez ere.

3. _Gorri_ dela eta garbi da bere esanahirik zaharrena ez zela kolorearena B.F.k (105) kontrakoa uste izan arren.[54] Euskaraz koloreen izenak sekundarioak dira eta Dixonek (1977) ADJ gabeko hizkuntzetan markatu 4 ordezkapen bideei lotzen zaizkie (ik. § 4.4.4): 1) PART. (_zur-i_ ‘kolorea’ < ‘*azala kendu’, _gorr-i_ ‘biluzia’, _hor-i_ ‘txakur kolorea’ < *‘txakur’ + PART.), 2) eratorriak (_bel-tz_ ‘bele gisakoa?’), 3) konposatu eta erlatiboak (_urdin_ ‘azul-berde-gris-marroi… < ur bilakatua’,[55] _beilegi_ ‘hori’ < ‘*behi kolorekoa’) eta 4) maileguak

53. _Odol-harri_ «sanguinaria, piedra cómo ágata de color de sangre»-ri buruz B.F.k (48. oh.) _DGV_-tik jaso berria dela eta —_odol_-en erabilera metaforikoa sendoago egin nahian erantsia—, askoz egokiago litzateke ez duela inongo testu-lekukotasunik eta lehen agerraldia Larramendiren _DT_-n dela erantsi izan balitzaio.

Bestalde, _*dVC_-ren erreduplikazioak $*dV_1dV_1C$ batetik abiatu eta _*d-_ galtzea eta ez _ab initio_ $*V_1dV_1C$ izatea aukera bat da L. Oñederrak inoiz adierazi bezala; hori bera esan liteke *_nVC_-ri buruz.

54. Ez da arrazoirik -KOR, GOR-en «AE aldaeratzat» hartzeko… ez bada sardinierazko _-kore, -kori_, eta enparatuetara hurbildu nahia. Gainera, «Trasken legeak» dioskunez, atzizkietan ahoskabe/ahostun alternantziarik denean ahostuna da alomorfo zaharra (cf. § 4.4.3.2 eta han aipatu bibliografia).

55. Hori da Mitxelenaren azalpena (1970b); egiantzekoago dirudien bezala _-din_ (cf. _-dun_: _bizardun_, etab.) erroa bada (De Rijkek, ahoz esana), _urdin_ I + A konposatua genuke.

(*berde, azul, marroi, gris*, etab.). *Gorri*-ren eraketa gardena da, erreduplikazioena baino gardenagoa eta seguruenik haiek baino berankorragoa. Are gehiago, *gor* oinarri beretik bada erreduplikaziorik (*go-gor* 'bortitz'), guztien artean ezagunena, izan ere; alabaina, erreduplikazio horrek ez du kolorearekin zerikusirik, 'biluzi', 'azala kendua', eta antzekoekin baino: badira *Mendigorria*-k (edo *Arrigorriaga*-k harako Sabino Aranaren famatua bezala) baina horiek ez dira inoiz 'gorriak' izan, biluziak, zuhaitzik edo landare gabe(tu)ak baizik. Orobat, garai modernoetan *zuritu* da fruituez edo aleez dioguna, baina garbi da noizbait 'zuritzen' ziren bakarrak noski *zur*-ak zirela eta, beraz, nekez pentsa liteke hitz hori elurrari esneari edo beste kolore horretako gauzei «betidanik» ezartzen zitzaienik.

4. Paleo-S-ak gorde dituen AEko errotzat aurkezten dira ondokoak, nahiz are ikuspuntu erromanikotik ere dena ez den urregorria:[56] *ala, haran, ardi, (h)artza, baso, berri, bide, *des, *dol, ertz, goni, gorri, hiri, istil, itz/iz, lats, logi, lur, mando, *nur, ola, on, ona, orri/osto, (h)otz, (h)obi, soro, *susune, iturri, [h]ur, zuri* (B.F., 99-115).

Ezin ditugu guztiak hemen bana-banaka aztertu; halere, hoskidetasunak dakarren lehen zirraraen ondotik bistakoa da hainbat akats eta xehetasun azalgaitz dela horietan: *ala* (zuzenago *alha*) erromantzea da,[57] *hobi, istil* eta *soro* bezala.[58] *Ola*-ren inguruan (hau ere hobe *olha*) B.F.k dioenez 'il termine *ola* designa in basco la 'capanna', sicuramente primitiva di legno, frasche e foglie'; Mendigatxaren lekukotasuna (*apud DGV*, s.u. 2) horren alde dator: 'ôla da kabaña eta xaxgu urteoro egiten deina'. Agud-Tovar hiztegiak dioenez, Larrasquetek ikusi zuen *olha* horretan bearnerazko *hoelhe* 'orri' (cf. arag. *fuella*),[59] Lhandek eta bestek defendatu eta Mitxelenak

56. Vide Wolf (2011) —eta lehenago (2000)— oro har (ez soilik ikuspuntu erromanikotik), batez ere «protesi» ugariez (597-598) eta baita sardinierazko corpusaren erabileraren aldetiko arazo ugariez edota substratoen ikerketaren metodologiaz ere; esan gabe doa, Wolfen kritikak nireak baino lehenagokoak dira, ez soilik kronologikoki baizik eta hierarkikoki ere.

57. Nahiz Mitxelenak (*FHV*) hizkuntzaren ondare zaharrekotzat hartu. Kontuan izan *alhatu*-ren postverbala dugula eta erka bekizkio Palay *halà* 'haler, tirer à soi, trainer péniblement et lentement; en As. aller doucement' eta baita Corominas & Pascual, s.u. *halar* eta A. Rey s.u. *haler*; azken biek germ. **halon* 'zerbaitetik tira egin', 'norberarengana hurbildu arazi'. Euskaraz, bistakoa denez, esanahi zaharrena ongi gordea da Err 'llevar al pasto, apacentar, alimentar; mover, empujar a', BN, Pouvreau eta Leiza 'mener au pâturage', 'sacar el ganado de la cuadra o establo al monte o pastizal para que paste' edo *diruak alhatu* (BN-mix) 'encaminar el dinero, mandar a su destino' adieran beste batzuetan baino, nahiz hori *OEH*-n 2. adiera bezala eman 'pastar, comer, etc.'-ren ondotik; halere, honen barruan ere «transhumer»-en lekukotasun argiak badira.

58. Lehenago hori bera uste nuen *bide*-ri buruz, baina ik. orain Lakarra (2016c) eta hemen § 4.6.9.

59. Beharbada hobe «sm. eta v. *hoelhà* feuillage, les feuilles' gehi 'feuiller, placer, poser des feuilles»

(*FHV*) ezetsi zuen lat. *aula* baino jatorri egokiagotzat eta VCCV egitura horrekin CVCren antitetikoa izanik AEkotzat nekez jo dezakeguna.

*Mando*-k AE izateko aukera gutxi du, Gorrotxategik (1987b: 957) euskarak zeltatik zuzen-zuzenik hartua lukeen mailegu bakarretarik baitu; nahiz eta B.F.ren asmakizun burutsua izan *harri* + *-tza* proposatzean bere **(h)artza*-rentzat, aterabide horrek aurretiaz **ardi-zani* atzera botatzeko ikusi duen akats bera du: biak dira akitaniera-ondokoak. Badakigu *lats, logi, lur* AEn —baina hori, noski, *Aitzin-AE-S baino askoz geroago zen— **dats, *don* eta **dur* zirela baina bitxia da Sardinian AEMko (Era aurreko azken mendeetako) **l-* formen aldamenean *des-, dol-* dugu, euskalari bezala, behintzat, ulerkaitz dena. Gainera, *hiri* (eta *ertz*) ez dira erro bereziak, AEM-ondoko **her* 'itxi' + *-i* '-ren emaitza baizik, 'itxi, hesitu / hurbil'.[60] *Berri, *goni, gorri, zuri, orri* eta *iturri*-k partizipioko *-i* dute, eta nahiz akitanieraz erantsia izan, ez zen erroaren parte ez AEZn eta ezta askoz geroago ere. *Baso*, bere CVCV egitura —eta (A-E-Sko ustezko gainerako guztiek bezalako eratorpen bidezko bisilabismoarekin— ezin izan liteke zaharregi; oso egiantzeko dirudi **bar* + *-so* analisi batek, baina ondoko *-rs-* > *-s-* B.F.k beharko zukeen baino askoz modernoagoa da. Onartezina da, azkenik, B.F.k AEko omen litzatekeen **iz* erroa aipatzea, jakinik Mitxelenak horren ezintasuna erakutsi zuela eta hidronimia erteuropar zaharrekotzat hartua izan dela.[61]

Ez gara xehetasun semantikoetan sartuko, baina goian **dol, gorri* edo *zuri*-rekin bezala, ez dute batere laguntzen B.F.ren hipotesia.

5. Metodoari dagokionez, esan behar dut B.F. baino ezkorragoa naizela hark erabili nire berreraiketei ez dagozkien sakontasun kronologikoak ematerakoan, ez baitziren helburu eta baldintza horietarako diseinatuak izan: baldin Aitzin-E-S duela 5-11 milurteko banatu bazen A-Z-S talde bat irlara zuzendu zenean (B.F., 162. orriko taula) eta hainbat mende geroago horien arrastoak aurkitu uste baditu egileak Sardinian eta Euskal Herrian, aipatutako forma linguistikoek antzinatasun hori dutela pentsatu behar ote dugu? Horrela ez balitz, «garapen paraleloak» izan ote dira, AEZ > AEM > EBZ >…

---

(Palay, s.v.). Ez da ulertzen zergatik *OEH*-n 'cabaña [tienda de campaña]' den 2. adiera, 'ferrería'-ren ondotik, are gutxiago (1973, s.v.) Mitxelenak beren-beregi kontrakoa markatu ondoren.

60. Dakidala, **nur*-ik ez da euskaraz edo, hobe, ez du arrasto ezagunik utzi; B.F.k zenbait aldiz dio (28. oharrean, esaterako) nik hori iradoki niola *huri*-ren jatorritzat (**e-nur-i* > *huri*.), baina ez dut gogoan horrelako ezer inoiz defendatu izana (cf. Lakarra 2010eko eranskina *hiri*-ren eta harengandik bereziezina den mend. *huri*-ren jatorriaz); nolanahi ere (cf. *hezur* < **ehazur, heuskara* < **ehuskara*, etab.), horrelakorik onar bageneza ere, *$h_2$ > $h_1$ ondokoa litzateke (eta hau *-n-* > *-h-* ondokoa, jakina), betiere akitaniera eta Antzinateaz geroztikoa.

61. Mitxelenak eman *iz-* < *ihintz* etimologiarekin bat etorri ez arren, bada aukera gehiago, noski, *izotz*-entzat: **hur-zotz*; cf. *ibar* < **hur-bar*, etab.

alde batetik eta paleosardinieraren barnean bestetik?[62] Bigarren eszenario honetan ez bide da oso garrantzitsu ez esanguratsu euskarazko eta paleosardinierazko hitz askok «antza» izatea fonetikoki nahiz semantikoki, Paleolitikotik hona… nahiz euskarazkoetan Era aldaketa ondoko berrikuntza historiko eta protohistorikoak diren;[63] izan ere, «garapen aske bateratzaile» horiek dira aitzinhizkuntza zatitu eta milaka urte beranduago hitzak antzekotasun eta berdintasunera eraman dituztenak (!); haatik, egiantzekotasun minimo bat izatekotan, alderantziz, hainbat eta hainbat forma ezberdin, urrundu, antzik gabeko itxarongo genituzke —*duo* : *erku* kasu ezagunaren tankerakoak, alegia— eta ez aurkezten zaizkigun homofoniak eta ia-homofoniak.

Sinesgarritasun handirik ez du honelako hurbilketa batek: *bad* 'gaizto' da ing. nahiz persieraz eta badira eusk, eta holand. *alkar* 'each other', eta baita Traskek (1996) aipatu greziera-hawaierazko ezagunak ere —ik. § 1.4—, baina horietan guztietan frogatu izan da ez dela erlazio historikorik: hitzok ez datoz aipatu hizkuntzen aitzinformetarik eta ez dira mailegatuak ere izan —ez alde batera eta ez bestera— eta, beraz, halabehar kasu famatuak dira. Guztion zorionerako, badugu homologia-sare erraldoi bat, hots, «IE Hizkuntzen Gramatika Konparatua» deitu ohi dena, eta ez analogia moderno urri bezain susmagarri batzuk; Gramatika Konparatu horrek eta beste ondo eraikitako enparatuek bereizi ohi dituzte delako «antzen» eta *pater* : *vater* : *father*… korrespondentzia erregularren artean eta, are gehiago dena, gai izan ohi dira aipatu *duo* eta *erku* bezalakoak ere batasunera eramateko. B.F.ri besterik komeniko litzaiokeen arren, ez da horrelako ezer AE eta PaleoS-ren artean eta halabeharrari «halabehar» eta homofoniei «homofonia» deitzen jarraitu beharko dugu estandar eta langa diakroniko apalenak ere gainditzen ez dituzten proposamenak.

Beharbada penagarria izan liteke euskalariok Sardiniaren iragan linguistikoa argitzen hain gutxi lagundu izana, baina Vennemannen «Vasconic» delako asmakizuna dela eta esan bezala (cf. Lakarra 1996a eta 2013e) ez da egiantzekoa AErentzat hedadura handiak bilatzen ibiltzea. Oroit bedi IEk, uralikoak, semitikoak edo bantuak historikoki

---

62. Cf. «Questo lunghisimo spazio temporale è contrassegnato preminentemente da un *isolamento* globale dell'Isola, che ha garantito cosí un'evoluzione autonoma e particolare delle radici importate dalla vecchia Iberia» (161); eta ez deritzot oso zuzen B.F.ren ondoko baieztapenari ere: «Piú rilevante delle scarne concordanze lessicali è sicuramente la palese affinità tipologica fra Paleosardo, Paleobasco e Iberico, tutte e tre le lingue agglutinanti (…)». AEZren eransle izaera oso zalantzazkoa —edota ezaugarri eransle askoren izaera berantiarra hizkuntzaren historian— alde batera utziaz ere (cf. § 4.5) balirudike konparatista baten egitekoa homologiak liratekeela eta ez analogiak, materialak lehenik eta formalak gero.

63. Ez dagokit niri paleoS-n zer gerta zitekeen erabakitzea baina pentsatzekoa da milurtekotan AEko aitzinforma berberak gordetzeko edota AEz geroztik gure hizkuntzak jasotako aldaketa berberak pairatzeko aukera aski urria dela, hutsa ez esateagatik.

bete dituzten eremuak beren aitzinhizkuntzei zegozkienak baino askozaz handiagoak direla eta, gainera, Neolitikoan eta, zer esanik ez, Paleolitikoan horrelako geografia linguistikoak salbuespenak zirela eta ez ohiko bilakabideak. (ik. § 2.10.2).

## 2.9. Euskara eta indoeuropera

### *2.9.1. Forni (2013)*

*Journal of Indo-European Studies*-ek Forniren artikulu luze bat oinarri hartuaz haren teoria monografikoki eztabaidatzeko esleitu zuen 2013ko zenbaki bat; horrenbestez, bi alorretan (IE hizkuntzalaritzan nahiz euskalaritzan) artean guztiz ezezagun zen egile batek hizkuntza horiek ahaide zirela erakutsi nahi zuen; zehatzago, euskarak IE familia handiaren barrenean senide gertukoenak hizkuntza zeltiko goidelikoak zituela, geografiaren, historiaren eta, batez ere, hizkuntzaren historiaren aldetik guztiz absurdoa dena.

Izan ere, zer pentsatu ematen du ohiko prozedura eta iragazkiei izkina eginaz —edota «eztabaida herrikoiekin» eta «hipotesi ausart eta berritzaileak» aurkeztuaz zarata egiteko zaletasun handiegia duen aldizkariaren beraren konplizitate nabarmenarekin— tankera honetako ekoizpen bat argitaratzeak, non eta —arkeologia, mitologia eta IEren bestelako alderdiez gainera— mundu mailan lekukotasun aberats eta ikerketa aitzinatuenak dituen hizkuntza familia horren ikerketa linguistikoaren gailurrean izan nahi lukeen aldizkari batean.[64]

Fornik azken garaipena lortu ez arren,[65] iritsi-berri batek —ez zuen lehenago aldizkari zientifiko bakar batean ere ezer bere izenean— graduko ikasle batek dituen gutxieneko oinarri metodologiko eta bibliografikoak ez izateak argitalpen zientifiko zenbaiten estandarrak gordetzen ote diren zalantzan jartzera garamatza: IE hizkuntzalaritzaz soilik hiztegi etimologikoak aipatzen dira bukaerako bibliografia laburrean, fonetika, morfologia, dialektologia diakronikoa eta antzeko alorrei buruzko inongo monografiarik gabe; euskal linguistikan Trasken hiztegi amaitugabea, haren *The History of Basque* eta Mitxelenaren *Fonética histórica vasca* —baina ez dirudi hau zuzenean inoiz erabili denik, Trasken bitartez baizik— eta G. Aulestiaren euskara-ingelesa hiztegia, noski. Fornik

64. Zail da ulertzen Forniren teoriak miatzera gonbidatu ikertzaile urrien artean —euskalaritzaren aldetik gainera, ez IErenetik— J. Bengtson bezalako diletante makrokonparaketa-zale amorratu bat izatea.

65. Editorearen sarrera «ezohikoa» da, gutxienez: «Given the level of hostility to the concept of adding Basque to the Indo-European family, the editor wishes to indicate why this topic appears in this issue of the *Journal of Indo-European Studies*…» (35), gero paleohispanista errespetagarri batek esan ziola genetikazko ideiekin bat ez etorri arren artikuluak merezi zuela argitaratzea eta eztabaidatzea eta beste zenbait zelebrekeria gehiago oraindik.

euskaraz, gaztelaniaz nahiz frantsesez euskalaritzaz idatzitako beste ezer ezagutzen duela frogatzen duen aztarnarik ez da, nahiz alorrean ezinbestekoa dela bistakoa izan.

Xaho aztia eta Darricarrere kapitaina, hurrenez hurren, XIX. mendearen erdialderantz eta XX.aren hasieran eta are Castro Guisasola (1944) gugandik hurbilago antzeko ahaidetasunaren alde agertu arren, bi ikersailen garapenak horrelako errepikapenen arriskua uxatua zuela zirudien XXI. honetan sartuak izanik.

Forniren saioak sailkapena bilatzen du soil-soilik: euskararen ertzean ez da hizkuntza horren kategoria gramatikalen sorrera eta garapenaren azalpenik eta IErenean ere aitzinhizkuntza ez da lehen baino hobeto ezagutzen, ezta euskal adar berria onartzeak dakartzan edo ekarri behar lituzkeen lehengo zuhaitzaren aldaketa eta egokitzapeak ere.

Ohikoa da erkatutako morfemen arteko egokitasun fonetiko eta semantiko erregularren arteko korrespondentzien bidez frogatzen dela ahaidetasuna nahiz eta usu hizkuntzalariak korrespondentzia horiek morfema gramatikaletan eta oinarrizko lexikoan bilatu eta ez zeinahi hitzetan. Izan ere, hauetan aztarna aski eriden ezean ofizioko ikertzaileek ez dute bigarren aldia —korrespondentziak zehaztu eta ezartzekoarena, alegia— hasi ere egiten (cf. Watkins 1990); Fornik morfologia axaletik ere ukitzen ez duelarik, ez dirudi aurrerago jotzeko gomitarik hoberena.

Ez da harritzekoa orain artekoaren ondotik Fornik ezer ez jakitea erroaz beherako CV egiturez, dela *sa-* (*sabel*, *sabai*, *sakon*, *samin*, *samur*, etc.), dela *gi-* (*gizen*, *gihar*, *gizon*), edo dela *la-* (*labar labur*', etc.) nahiz *za-*, *da-* edo *le-* izan); ezta ezagunago diren *-gi* (> *-ki*) eta *-la* (> *-ra*) atzizkiez, etab., ez euskara historikoan ezta historiaurrekoan ere (cf. § 4.2), ez erreduplikazioaz (cf. ibid.) —bidenabar, Aen soilik ISn aurkitzen dugu, ez ASn IEn bezala— eta ez du ezer esatekorik kide eta autonomia urriko adjektibo sailaz… Ez da zer esanik, ez du argudio sinesgarri bakar bat ematen euskaraz kreolizazio prozesu bat gerta zitekeela baieztatzeko: haren edozein baieztapenen aurrean barne-berreraiketaz jarduteak egokiago dirudi, batez ere tipologia diakronikoa eta gramatikalizazio kasu parekagarriak (austroasiatikoan, sinotibeteran eta gainerakoetan) ditugunean Forniren IEko nola-halako axaleko analogiak baino (§ 4.5).

Fonologiari dagokionez, Fornik hainbat etimologiatan aterabide *ad hoc*-ak bilatzen ditu eta arazo larriak ditu AEn /m/ falta dela onartzeko edota txistukarietan IEko bakarraren aurrean euskarak 2 edo 4 dituela azaltzeko. Orobat, ez du ulertzen bortitz eta ahulen arteko erlazioa eta ezin, bada, *gaz-i* 'salty' eta *gatz* 'salt'-en, *orraz-i* 'combe' eta *orratz* 'needle'-n, *ugatz* 'udder' eta *ugazama* 'wet nurse'-ren edo *hats* 'breath' eta *haserre* 'anger'-ren arteko hurrenkera diakronikoa egokiro ezarri, are gutxiago afrikatu kiderik ez duten frikarien kokagunean bertan (*hez-i* 'tamed' edo *haz-i* 'raised'-en). Amaierako afrikatuak azaltzeko *C* + *-s* taldeak darabiltza, horien inongo arrastorik izan ez arren eta,

aldiz, dakiguna (*gorputz* 'cuerpo' < lat. *corpus*, etc.) horren kontra doan arren; izan ere frikarien fortiziotik sortutakoak dira oro har.

Aurreko guztia ezin ordezka liteke itxura sasizientifikoa bilatzen duen ustezko lege fonetikoen zerrenda luze batekin, zeinetan hutsak, kontraesanak eta salbuespenak diren nagusi.

Laburtuaz, ez da euskararen eta IEren historiaren eta beren egituren eboluzioarekiko bibliografia aberatsean diren zailtasun, irregularitate eta arazo ugariak askatzeko inongo saiorik. Aldarrikatzen den euskara eta hizkuntza zeltikoen arteko erlazio genetiko hurbilak asko erraztuko beharko zukeen euskarak latinaren aurretik hartutako IE maileguen gaia (cf. Mitxelena 1964a, Gorrotxategi 1987b), horrela euskararen historiaurrearen ikerketan aitzinamendu handia zekarkeelarik (Lakarra 2012 eta § 4.6.4); baina ez da horrelako ezer lortzen (ezta proposatzen ere) eta egiten diren mailegu proposamen zehatzak (*hi* iz.ord, *inurri*, *euskara* (!)) ezin har litezke abiapuntu bezala ere.

### *2.9.2. Blevins*

> The superficial similarity between our reconstructed Proto-Basque sound system and that of PIE led us to apply the comparative method to these two languages with startling results: regular sound correspondences for all consonants and vowels, in a wide range of stems and words, including basic vocabulary. Conservative features of Proto-Basque suggest that it does not descend from Proto-Indo-European. Rather, our Proto-Indo-European-Euskara hypothesis is that these two ancient languages are sisters, both descended from the same mother tongue (29).

Honela zioen Juliette Blevins eta Ander Egurtzegik 2013ko abuztuan Oslon egindako Hizkuntzalaritza Historikoko Mundu Biltzarreko txostenean. Geroztik Blevinsek jarraitu du hipotesi horretan ikertzen nahiz ez duen oraindik argitaratu lantzen ari den monografia. Zuzenean edo zeharka lan horren berri izan duten euskalarien eta zenbait indoeuropar hizkuntzalariren iritzia aldekoa izan ez arren oinarrizko puntuetan iruzkinak geroratzen ditugu, egileak izan dezan bere hipotesia azaltzeko aukera duela hamar urte austronesistek eman zioten bezala bere onga-austronesioarekin.[66]

---

66. Cf. «Blevins (2007) startled the scholarly world with a novel proposal that many considered almost unimaginable before her: Jarawa and Önge of the southern Andaman Islands form a linguistic clade (Öngan) that is coordinate with the AN language family in a superfamily she calls 'Austronesian-Ongan'. Although there was universal strong skepticism among Austronesian specialists about her claim, the writer, who was asked to referee the manuscript, advised the editor of *Oceanic Linguistics* that this was a paper from a distinguished phonologist, and that

## 2.10. Konparaketa eta euskararen iraganaren ezagutza

> If we want to say, with Greenberg, that demostrating genetic relationship does not require any kind of reconstruction, then I think it's appropriate to ask what the purpose of our genetic classification is. I believe that most historical linguists value the classifications because they help us find out about the histories of the languages in a family. We reconstruct parts of their common protolanguage and then use those reconstructions to study and compare the changes that have occurred in the various daughter languages. In other words, to be useful to a historical linguist, a hypothesis of genetic relationship must be fruitful: a valid genetic grouping will permit reconstruction and thus lead to be a better understanding of the member languages and their histories. If a genetic hypothesis does not lead to new insights of these kinds, therein it is sterile and, within linguistics, useless (Thomason 1993: 494; esan gabe doa hizkuntza isolatuetan ere argudiaketa berbera litzatekeela).

### *2.10.1. Bongo-bongoa eta euskara*

Bitxia da amerikanista eta uralista batek —hots, euskalaritza urrunetik baino ezagutzen ez duen batek— egindako ahaidetasun frogatugabe eta frogagaitzen mundu-mailako zerrendan (Campbell 1998: 312-3) hiru bat dozena proposamen ospetsuenen artean bi euskararekin zerikusia dutenak izatea («Basque-Caucasian» eta «Basque-Sino-Tibetan-Na-Dene»); ohar bedi 6.000 bat hizkuntza bizi eta hainbat hildako, ehunka familia handi eta txiki eta dozenaka hizkuntza isolatu direla Campbell eta gainerako hizkuntzalari historiko-konparatisten agendan; beraz, gure hizkuntza besteren bat(zu)ekin eratu «ahaidetasun hipotesion» batez bestekoa izugarri altua da, labur, guztiz onartezina euskalaritzaren izaera zientifikoarentzat.[67]

---

every claim by a proven scholar, no matter how far it departs from received opinion, 'deserves its day in court. Consequently the paper was published, and a new assertion about the external relationships of the AN languages entered the literature, (…) Today one finds a surprising number of references and comments on the Internet referring to this claim, although few if any of them investigate its merits. The time has therefore come for the promised day in court» (Blust 2015). Ik. gorago 6. eta 47. oharrak ere Blustek Blevinsen aurreko hipotesiaz egindako kritikaz.

67. Ik. halere, kapitulu-hasierako aipua. Campbell (1998, 1.-ekoz 2013ko edizioan txertaturiko) «6.2.2. How can we advance knowledge of the history of language isolates?» atala ere osorik Mitxelena eta ondoko euskalaritzaren ikerketetan oinarritzen da, eta handik hartuak dira liburu garrantzitsu horretako azalpenetan erabilitako adibideak ere.

Traskek bere 1997ko liburuko azken atal bikainean euskarari buruz izan diren ahaidetasun eta jatorrien inguruko uste eta teoriak zerrendatzean gure hizkuntza ia beste zeinahirekin erkatu dela dakusagu: iberiera, akitaniera —hau da proposamen onargarri bakarra (ik. 3. kap. eta Campbell 2017a)—, IE (zeltikoa, latina, grekera, eslabiera eta sanskritoa), piktoera, hizkuntza berebereak, egipziera zaharra, hizkuntza sudanikoak eta Sahara-hegoaldekoak, semitikoa, etruskera, minoikoa, sumeriera, uraliera (suomiera bereziki), buruxaski, dravidiera, munda hizkuntzak, yeniseikoak, txuktxi-kamtxatka siberiarrak, sino-tibetera, eskimoera, hizkuntza na-deneak eta Amerika iparraldeko nahiz hegoaldeko hizkuntzekin, zerrenda ez delarik hemen amaitzen.[68]

Garrantziren bat zuten guztien iruzkin zehatz eta zentzuzkoaren ondotik, Traskek atal horri emandako amaiera are kitzikagarriagoa aurkezten digu opari gisa: arratsalde bakar batean lortutako euskara eta hungarieraren arteko 65 berbatako zerrenda (lehen dozena dakart soilik adibide gisa): *-a* : *a; aita* : *atya; -ak* : *-ak; alde* : *oldal; ama* : *anya; arau* : *arány; asko* : *sok; ate* : *ajtó; atze* : *hát*; *az(ti)* : *jós*; *baba* : *bab; bake* : *béke* (1997: 412-4). Kognado edo kognadotzakook, aurreko saio gehienetakoak baino gehiago eta askoz «hobeak» dira, egileak arrazoi osoz aldarrikatzen duen legez; hau da, aurrekoek baino estandar askozaz jasoagoak dira Traskenak…[69] berariaz eta jakinaren gainean oker ziharduen arren. Euskara hungarierarekin zergatik erkatu zuen zuritzerakoan ondoko arrazoiak jaulkitzen ditu: 1) inork lehenago (ustez) bikote hori konparatu ez duelako, 2) etxetik atera gabe eskura zuelako hungariera-ingelesa hiztegi on bat eta, *batez ere* 3) «ez zekielako tutik ere hungarierari buruz», sinestua baitzen azken baldintza hau —bi hizkuntzetarik bat gutxienez *ez* jakitea (usu ez bata eta ez bestea) euskararekin erkaketan aritu gehienek betetzen dutela (Lafon genuke salbuespen ia bakar).

*Reductio ad absurdum* berebiziko honi[70] ezer gehitzekotan ondokoa gehitu ahalko litzaioke, ene irudiko: Traskek bere saio horretan laugarren baldintza bat ere bete zuen, Xenpelarrek Longinosi bertso aldrebesak botatzen saiatu zen hartan legez edo; Trask

68. Cf. Vovin (1994) japonieraren etorkiez; hark dioenez japonierak lortu omen du jatorriez esandako kirtenkerietan erpina; ez jakin euskal tradizioa ezagut baleza iritzi berari eutsiko liokeen, nahiaz egiatan lehiakortasun handikoak diren haren zenbait kasu.

69. Meillet eta ondorengo konparatistentat legez kalitatea kantitatea baino askozaz beharrezkoagoa ez balitz, noski; cf. «In all comparative work, small is beautiful, but this is nowhere more important than in long-range work» (Janhunen 2008).

70. Berebizikoa hizkuntza-erkaketaren helburu hutsa sailkapena balitz eta ez azalpen diakronikoa eta inongo metodo estandarrik bete gabe burutu ahal balitz, edozein hizkuntza, ez bakarrik euskara, beste edozeinekin lotuaz. Ordea, hizkuntzalaritza zientifikoan ez da horrelakorik aspaldi, eta euskararen inguruko hurbilketa horiek guztiak lekuz kanpo dira Mitxelenaren 50-60etako lan erraldoiaz geroz.

hizkuntzak erkatzeko metodoaren oinarriak zein diren ez baleki bezala aritu zen, bere aitzindariak legetxez, noski. Alabaina, Xenpelarren moduan, Traskek hain erroturik eta burmuinean iltzaturik zituen hatsarri horiek non arratsalde bakar bateko bere uztak egoki-egoki dirudien, «aitzindarien» urte luzeetakoa baino askozaz hobea, noski.

### *2.10.2. Zer ekarri diote erkaketa hauek guztiek euskararen diakroniaren azterketari?*[71]

Hitz bitan esateko, ezer ez. Ezer on eta interesgarririk, euskalaritzaren eta euskal diakroniaren helburuetarako, bederen, ezer ez; bai, aldiz, lana franko horiei aurre egiten eta atzerapen eta luzamendu gehiegi alorreko benetako lanari. Meilletek behin eta berriro aldarrikatu zuenez, halabeharra, «kasualitatea» delarik hizkuntzalari historikoak eta konparatzaileak izan lezakeen arrisku eta etsai larriena, ezin bestelako atarramendurik itxaron oinarri ez helburu estandarrik gabeko hizkuntz erkaketa hauetarik.

Egia da Castañosek (1979), Traskek (1997) eta, bereziki, Agudek eta Tovarrek (1988-95) ustezko kognado edo maileguen zerrenda luzeak biltzen eta iruzkintzen dituztela baina ez da hor euskararen egituraren alde bakar bat argitzeko saio ez borondaterik. Hizkuntzalaritza historiko-konparatua modu egokian garatu den ikerketa-tradizioetan gertatuaren aurka, euskalaritzan aipatu erkaketotan ez da ikusten aurretiko bibliografian hizkuntzaren egitura edo historiaren alderdiren batez markatutako benetako arazoren bat askatzeko saiorik, ez gogorik ere. Ez jakin euskararekin erkatzen ziren hizkuntzen egitura edo bilakabidea argitu nahi ziren (ez, itxuraz) edo egileen egoei lagunarte edo txokoetan haize eman; eta behin ere ez ditugu esker onez aipaturik ikusten ustezko ahaide horien benetako ikerketetan (kartvelikoarenean, uralikoarenean zein berebereaarekikoetan, demagun). Salbuespen bakarra iberierazale zenbait bide dira, beharbada —aurrekoekin ez bezala— oraindik iberiera tutik ere ulertzen ez delako (ik. De Hoz § 2.1en).

Zaleturik itsuenen artean, hizkuntzalaritzak ematen ez diena arkeologia eta genetika modu *sui generis*-ean erabiliaz eskuratu nahi izan du batek baino gehiagok; alabaina, erdietsitakoa ez da lillura hutsa baizik.[72] Egoki bide da —inoiz Euskal Herritik landara ere euskalarion antzeko arazoak dituzte— uralista batek arestian idatzi hitzok gogoratzea:

---

71. Ik., zabalago, Lakarra (2013b) eta (2013c)-n, euskara-iberismoa eta euskara-aitzin-sardinieraren iruzkinetan oinarrituaz, hurrenez hurren; halaber Gorrotxategi & Lakarra (2013) *Journal of Indo-European Studies*-en argitaratu Forniren IE-euskara hipotesiaz: aukera bikaina hainbat estandarren beherapenaz gogoetatzeko; damurik, ez gara segur oraindik apalago nahi lituzkeenik ez ote dagoen.

72. Ik., esaterako, Mikel Iriondok (*Ekaia*, 2002) eta Jurgi Kintanak (1998-XI-17ko *Euskaldunon Egunkaria*-n) *Euskal Zibilizazioa*-ren «teoriaren» iruzkin genetiko eta arkeologikorako, hurrenez hurren; alderdi linguistikorako ik. Lakarra (1999).

> (…) the components of the origin are not interdependent: they function at totally different levels and thus even cannot contradict with each other. That someone has dark skin, does not automatically mean that his mother tongue could not be Finnish. Language, genes and culture do not actually meet at any level - they meet only in the artificial concept of «people» we use. This is the very reason why every scholar who understands the origin of certain people as a one coherent object of study is automatically misled. There are many origins and they are totally independent. *There is no way to solve the absolute origin of people, because there is no absolute origin at all. By linguistic study we reach only the linguistic origin, by genetic study only the origin of certain genetic feature and by archaeological study only the origin of certain feature of material culture* (Hakkinen 2006 [etzanak nireak; JAL]).

Aitzineuskarak «Europako latina» izateko zein Europa osoan, Asiaren zati batean eta Afrikan —baina hemen «ez gehiegi» zioen Estornesek, auskalo zergatik— hitz egin zen familia baten azken hondarra izateko aukera gutxi du. Ez da horretarako eskaini froga ez datu baliagarri bakar bat eta ikerketaren garapenaren une honetan horrelakorik noizbait lortzeak ez dirudi oso egiantzeko. Halaber, Europa zaharreko hizkuntz atlas zehatzik eraikitzea ezinezko den arren, bakoitzean hizkuntzalari gehiagok uste du hurbilketa egokiago baterako badela hantuste horiekin bat ez datorren irizpide sendo zenbait:

1. ez azken 500 edo 2.500 urteotako Europa baizik eta europarrak iritsi aurreko Ameriketako lurralde zabalena, XVIII. mendea baino lehenagoko Australia eta Ginea Berria lirateke eredu; hots, ehunka hizkuntza[73] eta dozenaka hizkuntz familia (cf. Janhunen 2009: 59);
2. hizkuntza horietako bakoitzaren hiztunak ez bide ziren ehundaka edo, gehienez ere, milaka gutxi batzuk baizen;
3. IEren aurretik (-3.000/-4.000) ez bide zen Europan familia horren tamainako enparaturik, horrelako hedadura hartzeko fenomeno historiko, ekonomiko, kultural ez bestelakorik ez baita antzeman neolito aurretik, ez eta gero ere nonahi.[74]

---

73. Cf. § 2.1eko gogoetak Iberiar Penintsulako Antzinateko hizkuntz-egoeraz eta Japoniarekiko erkaketa eta § 2.6koak Vennemanen Vasconic delakoaren arazoez.

74. Cf. «When postulating Paleolithic ancestor for a set of Neolithic or Mesolithic families, such as Uralic and Indo-European, an attempt should be made to explain the circumstances under which the underlying linguistic expansion could have taken place» (Janhunen 2008). Gogora bedi IE eta uralikoa familia estandar ezagunak direla; zer esan goian ikusitako [eta inolaz ere estandar ez diren] iberiera-euskara, e.-hamito-semitiko, e.-kaukasiko, e.-na-dene edo e.-euroasiatikoaren oinarrian izan beharko luketen «circumstances» horiei buruz!

Aurrekoak gogoan, AEk lurralde zabalak hartzen zituela —(proto)historian zehar euskarak betetzen duena baino areago—, edo horren sorrera Pirinioetarik urruti izan zenik pentsatzeak ez du inongo egiantzik.

Ikerketa historiko, arkeologiko, antropologiko edo genetikoetarik —zein bere kasa edo nahasian— segurtasun minimo batez atera litekeen ezer gutxi da interesgarririk hizkuntzaren historian (ik. Gorrotxategi 2007-2008);[75] bestetik, norbaiti beharbada zakar iruditu arren, ez dut gogoan inongo aurrerapenik, ez txikirik, ez handirik, AEren egituran eta horren bilakabidean zein euskara historikoarenean gure hizkuntza, beti urliari edo sandiari hobekien letorkiokeenarekin —orain honekin eta gero harekin— ahaidetasun genetikoak bilatzeko konparatu izan dutenen lanetik. Zorionez edo zorigaitzez, azalpen diakronikoa da hizkuntz-familia garatu guztien egitekoa eta, aspalditik, adanismo inozorik gabe, ederki burutzen dute horietan egiteko hau, istorio eta ipuintxoetan norberaren eta inoren astia galarazi gabe.

Benetako ahaidetasun-hipotesi linguistikoek —IEak, semitikoak, austronesioak, uralikoak… baina baita mundu osoko talde txiki eta ezezagunagoek ere— hizkuntza eta hizkuntz familia haien egitura eta historia argitzeko orduan erakutsitako emankortasuna dute beren berme nagusi; horrek dakar, ez bestek, hipotesi funtsgabeen (Campbell 1998koa bezalako) zerrenda beltzetan kokaturik (= ahazturik) ez izatea. Euskalari diakronista urrientzat okerrena zera da: beren aztergaiarentzat ez, argigarri baliagarri ez izateaz landa, aurreko orrialdeetan ikusi saioen eta beste zenbait are okerragoren bidez, usu beren egiteko nagusia berandatu eta are oztopatu (eta oztopatzen) ere dela, inoren lilluren eta agenden morrontza onartezinean eroriaz.

Aurreko ataletan aurkeztu ditugun teoria eta hipotesiek ez dituzte hizkuntzalaritza historikoaren eta gramatika konparatuaren hatsarre eta metodoak jarraitzen, ezinbesteko diren arren ahaidetasun zein sailkapen berri baterako edozein proposamen kontuan

75. Cf. «So however applicable and promising phylogenetic methods might appear to be at first sight as tools for investigating language histories, even a cursory look at how language behaves in reality shows just how problematic their application to language data can be. The analysis of those data has to be alive to the myriad ways in which the nature of language, and how it changes, can so readily render language data immeasurably less straightforward than meets the eye. It is self-evident that unless the encodings we feed into phylogenetic methods are informed by such linguistic awareness, we cannot place any great faith in their output as meaningful enough to be of any real use» (Heggarty 2006 —«Interdisciplinary indiscipline? Can phylogenetic methods meaningfully be applied to language data and to dating language?»—: 193, ondorioen hasieran). Ikuspegi hau ez da «zientzietako aldizkarietan» nagusi zalantzarik gabe. Egiari zor, Heggartyk baditu edozeinek beren-beregi hizkuntzalaritzazkotzat joko lituzkeen lanak ere; gai horietaz interesatuen artean zail litzateke kide askorik aurkitzen.

hartzeko eta egokitzat izateko eztabaidarako edo kitzikagarritzat hartzeko (ez Jainkoaren hiztzat isil-isilik onartzeko); hainbatetan azalduak eta zedarriztatuak dira baldintzok, esaterako Hamp-en (1998: 13-15)-eko lan bikainean:

1. datuak ez dira erkatutako hizkuntzetan berezilari diren filologoek aztertuak eta onartuak;
2. adituek edo erkagaiak ama-hizkuntzatzat dituzten hiztunek datu horiek ez lituzkete analizatuko (morfemak zatituko, adib.) beraiek egiten dituzten bezala;
3. ez dituzte erabiltzen soilik konparaketa baino lehen ongi finkatutako datu eta analisiak edo horiekiko diferentzia gramatikal eta kronologiko ezagun eta guztientzat onargarriak dituztenak;
4. erlazio genetikoak frogatutzat aurkezten dituzte, horiek formalizatuko lituzkeen zuhaitza ontzat emana izan aurretik;
5. «Claim» ugari aurkeztuaz ikertzaileen lanerako asti urria exkaxten dute, behartzen baitituzte miatzera eta segurtatzera datu guztiak eta bilatzera okerrak eta «The disassembly of illicit trees is a time-taking and potentially annoying business which displaces useful scholarly work»; azkenik,
6. «The dissemination of such extended claims gravely misleads the public, a public not equipped to test for such technical failures» (Hamp 1998: 15).

Atal honen amaieratzat nekez aurki liteke Mitxelenak 1954an Boudaren metodoez Holmerri egindako gutun batean zioena baino egokiagorik; nago aipatu gainerako idazle gehienei ere aldaketa handirik gabe legokiela:

> (…) estoy plenamente convencido ahora de que una parte muy considerable de sus paralelos es errónea, y que esto puede demostrarse, que otra gran parte es absolutamente problemática, e incluso, que si alguna vez acierta, le ocurre esto por completa casualidad y a pesar de sus mejores esfuerzos para no conseguirlo. En una palabra, él no investiga nada; se limita simplemente a tratar de demostrar, como sea, una idea preconcebida. Comprendo que le va mucho en ello, puesto que en esto parece haber cifrado el éxito o fracaso de su obra científica, pero esto no es razón para que los demás vayamos a aceptar sus argumentos cuando, como ocurre tan frecuentemente, son completamente forzados y contrarios a todo lo que podemos saber sobre la historia de las palabras y de los sonidos vascos (Satrustegi 1998: 325-326). Ik., orobat, 11. eta. 32. oharrak Boudaren zentsore-lan ezezagunegiaz).

## 3. HISTORIAURREKO EUSKARAREN AZTERKETA. I. AITZINEUSKARA BERANTIARRAREN BERRERAIKETA

**3.1.** Nahiz Bonapartek, Campionek, Azkuek edo Uhlenbeckek eta, batez ere, Gavelek (1920) euskararen fonetika historikoa ikertu eta zenbait berreraiketa ere egin, oraindik hizkuntzalaritza historikoaren garai estrukturalista-aurrekoak ditugu, dela berreraikitakoaren izaeraren aldetik, dela sistemarenetik. Gavelek, esaterako, /$b^h$, $d^h$, $g^h$/ herskari ahostun hasperendunak berreraiki zituen, nahiz munduan zehar oso hots bitxiak izan eta euskaraz historikoki horien arrastorik ez ezagutu.[76] Hurbilketa beti atomista zen: ez zen AEren kontsonante-*sistemaren* berreraiketarik. Nahi izan balute ere —Schuchardtek ez zuen AE ez aitzinhizkuntzetan sinesten, etsai neogramatikoen jardunetik hurbilegi baitziren—, konparaketaren ohiko metodoak erabiliz, hots, egokitasun mota bakoitzeko jatorrizko fonema bat berreraikiz, konplexutasun ikaragarrizko sistema sinesgaitzen batera iritsiko bide ziratekeen (ik. Lakarra 2003, 2009d).

Gauza ezaguna da euskarak mailegu-geruza asko dituela, horien artean markagarrienak latin-erromantzetikoak direlarik. Horien analisia XVIII. mendean hasia zen eta gero ere sarritan izan da ikergai, —hurbilketa egoki zein desegokiekin— hizkuntzaren izaera usteldua edo natogabea aldarrikatzeko ez zenean. Lakarra (2003)-n zehaztasun apur batez aztertu genuen zenbait autore garrantzitsuk —Schuchardt, Gavel, Martinet eta Mitxelena— maileguen azterketaz egin zuten erabilera euskararen historiarako.

Lehenak, nola ez, polimorfismoa eta bariazioa bistaratzen ditu, batez ere, bere lan ugarietan, aldaketa-erregelarik (= lege fonetikorik) ez zela markatzen ahalegin handiak eginaz. Mitxelenak azaldu zuen legez (1977 [1961]: 14-15),[77] euskal alorrean joan den

---

76. Mitxelenak ez zion inoiz kritika gogorrik egin Gaveli, Schuchardtekin egin legez, baina haren *FHV* bestearen Éléments-ekin erkatuaz errax ikus genezake ezberdintasun eta isilpeko erantzun ugari dela. Inon baino gehiago hasperenaren kapituluan, Gavelek berariaz baieztatzen baitu hots hori ez zela ez euskara zaharrean, ezta Hegoaldeko euskalkietan ere, Iparraldekoen berrikuntza berantiarra omen zelarik.

77. Schuchardti buruzko kritikak eta salaketa gogorrak lehen lanetarik hasi eta hil ondoren argitaratu bateraino (cf. Mitxelena 1987c) hedatzen dira:

> No hace falta ser un observador muy perspicaz para que salte a la vista lo peculiar de sus métodos [i.e., los de Schuchardt]. Parece natural que, *al penetrar en un campo poco trabajado, empiece uno por buscar apoyo firme en las partes más estables y, por decirlo así, regulares del léxico.* Pero a él le interesaba lo cambiante, lo inconstante, lo inseguro (…). Gracias a la exuberancia real, favorecida más de una vez por su rica imaginación, pudo reunir grupos de palabras, cuya relación mutua no se preocupó en aclarar (…). Y así dio la impresión, ciertamente en desacuerdo con los hechos, de que el vascuence es una especie de País de las Maravillas donde nada es previsible y donde todo lo irregular y estrambótico encuentra la tierra prometida (…) A

mendeko 6. hamarkadan metodo konparatua euskal alorrean sartu bitartean —eta horren barrenean sar genezake barne-berreraiketa— haren ezarpena ahul eta zalantzatsua izan bazen, Schuchardten erruz izan zen bereziki, haren asmo nagusia beti neogramatiko etsai gorrotatuen kontrara aritzea baitzen.

«Euskara eta erromantzea» izan zen Schuchardtek 1906an argitaratu zuen euskalaritzako artikulurik famatuenetarikoa. Bertan biltzen zituen euskal hitzei buruzko —batez ere latindar eta erromantzetiko maileguekiko— hainbat gogoeta luze, argitara berri zen Azkueren hiztegia oinarritzat harturik: aldaketa fonetikoak eta semantikoak, horien hurbileko edo urrunagoko zioak, hitzen hedadura EHn eta horien aldaera edo paraleloak handik kanpo… Ez da harritzekoa —argitaratu zituen beste askorekin batean— artikulu honek Schuchardti bizitza osorako eta are geroago ere euskalari eta erromanista handiaren fama eskuratzea.

Haren irizpideak aurreko lanean ere argi izan arren, formulazio gardenagoa dute hogei bat urte geroagoko «Euskara eta hizkuntzalaritza» deritzonean: hasieratik bertatik, Humboldt ispilutzat hartuaz, munduko hizkuntza bizi eta hilak zein etorkizunean era litezkeen guztiak giza-lengoaiaren batasunaren partaide direla, batasun horrek gradu ezberdinak lituzkeelarik, zenbait hizkuntzaren artean den bistako antzekotasunetik beste batzuen arteko itxurazko erlaziorik ezeraino.

Schuchardtek aitortzen duenez (1925: 552-553), hurrengo batean definitzeko lagatzen duen bere hizkuntza ahaidetasunaren ulerkera berezia izango da analisiaren gune, behin eta berriro lehendik Meilletekin gai horretaz zuen eztabaidaren oihartzunak aurki ditzakegularik.[78] Lehen jazarraldia neogramatikoei dagokie, noski, lege fonetikoei uko eginaz eta aldarrikatuaz lege soziologikoak direla soilik hizkuntzari dagozkionak eta Wundt psikologoarekin batean hizkuntzak duen sorkuntza alderdian norbanakoaren nagusigoa ezarriaz gizartearen gainetik. Ez da, beraz, harritzeko bere euskalari-lana amaitzea esanaz hizkuntzan naturala irregularitatea dela eta erregulartasunak ulertezin direnak (1906: 359-360).

esto se añade su despreocupación por la historia. Aunque una variante esté atestiguada en todos los dialectos y desde los textos más antiguos, como ocurre con *barazkari* «comida del mediodía», no siente el menor reparo en declararla secundaria y considerarla derivada de *bazkari*, sin duda más moderno, para poderle dar etimología latina. En cuanto a los sonidos, siempre afirmó que las leyes fonéticas eran una necesidad metodológica, pero sin duda pensaba que eran una triste y pesada necesidad, como el trabajo para el hombre (Mitxelena 1956: 68-69).

78. Bidenabar, 55. orrialdean beren-beregi agertzen da egilearentzat, Uhlenbeck eta Trombettirentzat bezala, ez dela kontraesanik euskara-kaukasiera eta euskara-hamitikoa ahaidetasun hipotesiak aldi berean aldarrikatzean; ideia edo jokabide horrek bizitza luzea izan du ondoko euskalaritzan, Tovarren eraginez hein handi batean.

Are gehiago, oraindik eratzen ere hasi gabe diren aldetik «gero hain goren ageri diren lege fonetikoak ahul eta deusetarako» ageri omen direnez egoera ezin hobean ginateke (1906: 482). Schuchardtek pozik aldarrikatzen duenez (1906: 473),[79] euskal lexikoan —jatorri eta garai oso ezberdinetako formak nahastekatzen direlarik— ezin omen da argitu lege fonetikoen bitartez maileguen sarrera-data ere.

Honainoko baieztapenak ez dira bakarrak ez berriak Schuchardten lanean, eta lehendik agertuak zituen hurbilketa ezagunekin ongi lotzen dira: horrenbestez, euskal mailegu zaharretan nahiz *k-* < *c-* nahiz *g-* < *c-* (1906: 486) gerta zitekeela zioen, hitz-hasierako ahoskabe eta ahostun horiek sailkatzeko geografia dialektalari egin behar zaiola kasu eta ez kronologiari (182), hitz barruko herskarien bilakabideak azaltzen duela hitz-hasierakoena (183), *-n-* > *-h-* aldaketa ez dela inoiz gertatu eta zalantzan jar litekeela Hegoaldeko dialektoetan *h* inoiz izan denik (184), *-h-* eta barruko ahostunak gehienbat hiatoak hausteko garatutako hots berantiarrak direla (184hh), eta delako hiatook ez lehenagoko kontsonante-erorketetarik baizik eta geminazio bokalikotik sortuak omen (186)… gero hainbat euskalari heterodoxok errepikatuko duten ustekizun funtsik gabea sortuaz (cf. Mitxelena 1950), hedadura geografikoaren edo ondare zaharreko hedaduraren aldetik kanpoko irizpideak falta hitz-hasieran eta barruan arbitrarietate osoa dela lege (193), etab.

Schuchardten eta beste garaikide batzuen aurrean aurrerapen handia ekarri zuen Gavelen 1920an argitaratu zenetik berrogei bat urtez euskalari eta euskararen historiaz interesaturiko hizkuntzalari guztien eskuliburua izan zen *Éléments de phonétique basque*-k. Ezer baino lehen, bere osotasun asmoa markatu behar da, diren euskal hots eta soinu guztiak aztertzeko asmoa baitzuen, horretarako esanguratsuak ziren hitz guztiak aztertuaz —1.300 edo 1.400 ageri dira haren «Index alphabètique» delakoan—, eta ez latindar mailegu bitxi eta arraroen antologia bateko istorio-bilduma bat. Orobat, aipagarria da Gavel barneko eta kanpoko irizpideak erabiltzen saiatu zela —ahal zen neurrian, bederen— aldaketa fonetikoen sorrera, iraupen, ezabaketa eta beste zenbaitekin izan dezaketen erlazioa ikertzeko eta horren ondorioz, «legeez», «lege agortuez», «lege biziez» eta are huts-hutsean eta garbiro «lege fonetikoez» mintzatu zen (1920: 34, 70, 83, 185, 316, etab.).

---

79. Schuchardti aipatuki kontrajarriaz, Mitxelenak usu (cf., adib. Mitxelena 1964a) goraipatzen du Achille Luchaireren jarduna. Hara, esaterako, Mitxelenaren 1956ko metodoari buruzko lan bateko azken parrafoa: «Insistió [Luchaire] en último lugar sobre la importancia de fijar eso que se suelen llamar leyes fonéticas. Porque pretender hacer etimologías sin conocer las regularidades observables en la evolución histórica de los sonidos de una lengua, es un entretenimiento que guarda tanta relación con la ciencia como puedan tener el Calendario Zaragozano o el más reciente del "Cashero" de Régil con la meteorología».

Hizkuntza emailearen azterketa fonologikoa falta izanak —latindar ozen eta herskarietako /soil/ ~ /geminatu/ oposaketak, demagun— baldintzatzen zuen, ordea, mailegaketaren bidez AEko sistema fonologikoaren inbentarioko unitateak eta, horrenbestez, hauen sistema barneko erlazioak zehaztea: honela, Gavel ez da ohartzen, adib., dialekto modernoetan gertatzen denaren aurka, bi eratako *l* eta *n*-ak zirela —eta hortik anekdota hustzat edota irregularitatetzat aurkeztea *annona* > *anhoa*-ko bi sudurkarien emaitza ezberdinak, edota txandakatzeak eta nahasketak ikustea bokalarteko *r* eta *l*-en bilakabidean. Horregatik beragatik, ezin antzeman *anaia*-ko sudurkaria ezin izan zitekeela lehenago *ard(a)o* / *ardan*-ek bokalartean zuen berbera edota *alaba*-ren albokoa ez zela *Araba*/*Álava*-ren bera. Alabaina, bai markatzen du euskarazko *l* > *r* eta *ll* > *l* gaskoiz aurkitzen dugun *l* > *l, ll* > *r*-ren kontrakoa dela, eta zalantzan jartzen du maileguetako *n* > *ø* euskararen barnean pairatu ote duten beste hizkuntza batzuetan ere jaso dutelako.

AEren zati solteak ere berreraiki ez arren eta, oro har, ondare zaharreko hitzentzako etimologiarik proposatu ez arren, Gavelen liburua ezinbestekoa da euskalaritzaren alderdi hauen garapenaren barruan: bertan hainbat ohar interesgarri aurkitzen dira ahozko hizkuntzaz (batez ere Iparraldeko dialektoetakoaz) eta baita inguruko hizkuntza erromantzeez zuen ezagutzatik datozen hainbat konparaketa eta azalpen interesgarri ere. Alabaina, bi eratako ezberdinatsunak dira markagarrienak Schuchardt eta lehenagoko ikertzaileekiko: batetik, euskararen historia eraikitzeko hain beharrezko den kronologia erlatibo zein absolutuarekiko agertzen duen ardura eta, bestetik, bere etengabeko zehaztasuna (ik. 28-29. or., adib.) «joerak», «bapateko fenomenoak» (98. or.), sistematikoki ikertutako «legeak» (cf. supra) eta, hauen barnean, zein diren fenomeno erregularrak eta zein diren salbuespen. «Les exceptions qu'on pourrait signaler à cette régle sont plus aparentes que réelles, comme nous allons le montrer» (73. or.) edo «en réalité, le pasage de *ai* à *i* a dû se faire par deux étapes intermérdiaires» (19. or.) bezalako adierazpenek erakusten dute diakronia egiteko beste modu egokiago bat hasia zela.

**3.2. Martinet herskari zaharrez**

Martinet fonologia diakronikoaren metodoa kasu bereziki gaitz batean proba egiteko asmoz hurbildu zen aitzineuskarara, garaitsu hartan semitikoarekin, IEarekin, eslabierarekin, zeltikoarekin edo erromantzeko beste arazo batzuekin egin bezala (cf. Martinet 1955). Eta ikuspegi estruktural baten beharra aldarrikatzean —hots, ez soinu honen edo haren bilakabidea, baizik eta sistemarena kontuan hartu behar dela erakutsiaz—, ikerketaren oinarriak aldatu zituen. Ohartu zen Euskal Herriaren egoerak —elebitasun-egoera luzea, euskalkien arteko harreman etengabeak—, oso zail bihurtzen

zuela pilatu ohi diren aldaera ezberdinen artean bereiztea zer den bilakaera erregular eta zer den mailegu edo euskalkien arteko harremanen ondorio.[80]

Kinka honetan, maileguek euskarri sendo bat eskaintzen dute. Latinetik eta erromantzeetatik etorritakoek osatzen dute euskarak hartu dituen maileguetan talderik zabal eta seguruena —ik. § 4.6.4 ustezko latinaurreko maileguez—: hitz hauetan abiapuntua (jatorrizko forma latinez) eta erromantzeetako bilakabidea, biak ezagutzen baititugu, ondare zaharreko hitzetan ez bezala. Maileguen nolabaiteko kronologia batera irits gaitezke (latin garaikoak vs. erromantze garaikoak bereizi, adib.) eta, honen bitartez, azken bi mila urte hauetan zehar euskararen barruan gertatutako aldaketa zenbaiten kronologiara ere. Gero (cf. Mitxelena 1964a, 1974), formaren arabera zaharrago eta jatorrizko formatik gertuago (erromantzezko aldaketa gutxiagorekin) eta, orobat, zaharrago eta aldatuago (euskararen barnean) dira maileguak: eusk. *gerezia* < lat. *ceresia* /ke-/ zaharra dugu errom. *ke* > **tze* > *ce* /θe/ aldaketa gertatu baino lehenago sartu behar izan duelako hizkuntzan; halaber, zaharra dugu, euskaraz aspaldi jazotako *k-* > *g-* aldaketan parte hartu baitzuen (cf. *pacem* > *bake*).[81]

Uhlenbecken ustez, bokalarteko ahoskabeekiko disimilazioz hasierako ahoskabea ahostundu zen. Baina, halako disimilazioak euskaraz ezezagunak izateaz gain, ahostuntzea bokalarteko herskari ahoskaberik ez duten hitzetan ere jazo dela dakusagu (*gerezi, gela, bilo*…). Gavelek (1920: 314-325) ez zuen onartu azalpen hori eta proposatu zuen hasierako herskari guztiak ahostundu zirela erregularki lehen maileguak hartu eta gero, zeren eta oro har euskaraz oso hitz gutxi hasten baitira herskari ahoskabez, eta salbuespen horiek erraz azal baitaitezke beste era batera (mailegu berriak, fonosinbolismoak, hasierako bokalen erorketak, atzeranzko asimilazio ugariak…).

Martineten iritziz, oro har, Gavelen azalpena arrazoizkoa da: badirudi euskarak joera handia zuela herskariak hitz-hasieran ahostun gauzatuko zen fonema batez bakarrik ordezkatuta egoteko, hitz-bukaeran ahoskabeaz, eta hitz-erdian (guztiz bokalartean) bi fonemaz, bata ahoskabe (batzuetan hasperendun) eta bestea ahostuna. Baina, zergatik? Hitz-hasierako ahostuntzea inguruko erromantzeen eragin handiari egotzi behar zaio Martineten ustez. Eragin horrek behin betiko aldatu omen zuen lehenago zeharo ezberdina zatekeen AEren T-sistema.

---

80. Garatu beharreko gaia dugu eten garbi eta iraunkorraren faltak euskararen dialektalizazio prozesuan izandako eragina (cf. IE hizkuntzak edo austronesioak, adib.); cf. § 5.3.

81. Ik. Guiter-en 1989ko saio laburra, erromantzeaz Strakak 30 urte lehenagokoan oinarritua. Jakina, tarteko pausu eta fenomeno kontrajarri asko da: Z *zekürü* gainerakoen *sekula* baino zaharrago dugu euskaraz (txistukari bizkarkaria eman du, eta baita *-l-* > *-r-* ere; *sekula* horiek euskaraz gertatu ondoren bertakotu da), baina Z *zelü*-ri bai *gerezi*-ren *k-* > *z-* eta baita *zekürü*-ren *-l-* > *-r* falta zaizkio (oraingoan 2. hau bada gainerako dialektoetan).

Maileguetan ikusitakoaren arabera, ahostuntasunaz beste zerbait behar da sistema hura ezaugarriztatzeko: abiapuntua ez legoke ahostun/ahoskabe oposaketan, bada, baizik eta oso bestelako batean. Daniera lagun, *fortis* (bortitz) / *lenis* (ahul) oposaketa proposatzen du Martinetek eta bi herskari sail egongo ziren, bortitzak /P, T, K/ eta ahulak /p, t, k/; hara, ib. (adib.), hortzetakoak:

| | Kokagune bortitza (# —) | Kokagune ahula (V — V) |
|---|---|---|
| Fonema bortitza /T/ | [$t^h$] | [t] |
| Fonema ahula /t/ | [t̥] | [δ] |

Herskari bortitzak hitz-hasieran hasperendun ahoskatuko ziren [$p^h$, $t^h$, $k^h$]; bokal artean, berriz, hasperenik gabeko ahoskabe [p, t, k]. Herskari ahulak hitz-hasieran ahoskabe goxo bide ziren [p̥, t̥, k̥], eta bokalartean espirante ahostun [β, δ, γ].

Latinetik hartutako maileguetan hasierako herskariak, han ahostun zein ahoskabe izan, biak hots ahularen bitartez islatu ziren AEz, kokagune horretan *lenis*-a ahoskabe izan arren, bietatik ezin urrunago zegoelako *fortis*-aren hitz-hasierako alofono hasperenduna. Bokalartean, berriz, zeinek bere kide hurbila zeukaten: ahoskabeek bortitza (kokagune horretan ahoskabe luze baina hasperengabea), eta ahostunek ahula (kokagune horretan ahostuna). Beraz, hitz-hasieran AEren herskari bortitzen saila latinezko hitzik gabe geratu zen. Beranduago eta inguruko hizkuntzen eraginez desagertu omen zen bortitzen saila, horrelakorik zuten jatorrizko morfemetan hasperentasuna areagotu eta hortik espirantea [x-] > *h-* (> ø) emanik, eta ahulen saila ahostun bihurtuko.

Martinetek —eta horrela ondokoek ere— sistema kanpoko indarren eraginez azaltzen zuen inguruko hizkuntzetan falta zen bortitz hasperenaren galera (**th-, *kh-* > *h-* > *ø-*) baina berak beste aukera batzuetan erabili hiperkarakterizazio hutsak *(*th-, *kh-* ➝ *h* : */ p̥ / t̥ / k̥ / ➝ *b-, d-, g-*) azalpen nahikoa dirudi; ez da ikusten gehiagoren beharrik, mendeetan mailegatutako [-ahost.] nahiz [+ahost.] sistematikoki ahularen bitartez egokitu ondoren, arazorik gabe, itxuraz.

Inguruko hizkuntzen eraginez pairaturiko herskari bortitzen erorketa zuzena (**Th-* > *ø-*) ez da onargarri, —beharko litzatekeen bezain ikertua ez den arren (ik. § 4.3.6ko oharrak)— ondare zaharrean **Th-* > *ø*-ren aztarnak baitira;[82] aldiz, honelako

---

82. Akitanierazko *Talsco* / *Halsco* ia bakarraren arazoez landa —*Sutugio* / *Suhugio*-ren testuingurua ez da berbera, orain —*FHV*-n egindakoaren kontra— ezin aldarrika genitzake AEkotzat Err, Zar, Aez eta zenbait hizkera nafarretan 1800 aldetik aurrera erakusleetan aurkitzen ditugun belarrak: horietan ez arkaismo jakingarria baizik eta berrikuntza oso berria (*h-* > *x-* > *k-* / *-h-* > *-ø-* > *-g-*) baitugu (cf. Lakarra 2014 eta hemen § 4.3.6), nahiz hau ezaugarri arkaiko baten

bilakabideak maileguetan (*cauea* > *habia, *kar* > *harri*) bakoitzean arazotsuago bilakatzen dira jatorrizko hizkuntzetan horrelakorik ez baitugu aurkitzen. Maileguetuetako kasuok ontzat eman behar baditugu badirudi ondare zaharrekoen eredu ez baizik eta beren kideen ahoskabe > lenis (> ahostun) bilakabide orokorretik ondare zaharreko herskari bortitz > hasperendunera aldatu ziren salbuespen urriak genituzkeela. [83]

### 3.3. Mitxelenaren eredua

> Etant donnés l'autorité indiscutible de Schuchardt ainsi que le rôle prépondérant qu'il a joué dans ces recherches, on ne saurait que regretter certains aspects de son oeuvre qui découlent de ses conceptions théoriques: son penchant pour l'étymologie intuitive, presque impressioniste; son insouciance à l'égard des sons; sa tendence à expliquer *ignotum per ignotius;* le fait qu'il rennonce fréquemment à considérer l'histoire des mots en question, qu'il connaissait du reste assez bien la plupart des cas. Tout ceci était bien plus dangereux dans le domaine basque que dans d'autres beaucoup plus étudiés oú les critiques de Schuchardt, dont on ne peut souvent nier le bien-fondé, n'ont pas réussi à ébranler les convictions de base ou à introduire des changements profonds dans les méthodes usuelles. Voici ce que nous voudrions montrer ici dans le concret à l'aide d'un certain nombre d'exemples, pas toujours neufs. Nous allons commencer par l'histoire des mots (Mitxelena 1957b: 108).

***3.3.1.*** Mitxelenak (1951) Martineten lanaren berri eman zuen *BAP*-en; laburpenarekin eta haren balioaren eta ekar litzakeen aurrerapenekin batera, haren teoria sendotzera eta hedatzera zihoazen hiru eratako oharrak egin zituen, orobat: (a) [f]-ren inguruan, (b) geminatu- eta herskari-talde ahostun eta ahoskabeen emaitza berak euskaraz eta ezberdinak erromantzeetan eta (c) lekukotasun akitaniarrak eta Erdi Arokoak. Martineten proposamena sistema osora hedatu zuen, bortitz/ahul oposaketa kontsonante-sail guztietan zegoelakoan, /h/-az landa. Berreraikitako kontsonante-sistema osoa ondokoa genuke:

| | | | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| Bortitzak | — | T | K | Tz | Ts | N | L | R | h |
| Ahulak | b | d | g | z | s | n | l | r | |

gainean —zenbait mendez soilik erakusleetan gorde den h-aren gainen, alegia— egin.

83. Martinet txistukariez ere aritu zen 1955eko liburuan, baina haren proposamen aski konplikatu eta emaitza ezagunik gabekoak ez du jarraitzailerik izan; azentuera zaharrari buruz zuen ikuspegiaz, ik. beherago.

***3.3.2.*** Hots gehiago fonema gisa ez agertzeak ez du esan nahi—fonosinbolismo gisara bada ere— ez zenik, ezpada ditugun datuekin ezin berreraiki daitezkeela behar den segurtasunez. Gaurko euskaran dauden hotsetatik Mitxelenak batzuk lehen unetik albo batera utzi zituen:

1. ezpainkari bortitza: /p/ hotsak ez zuen izaera fonologikorik, gutxi agertzeaz gainera, agertzen denean /b/-ren alofonoa baita (adib., txistukari ondoan);
2. sabaikariak: euskara historikoan hots adierazgarriak dira edo automatikoki sortuak (sekundarioak, beraz); sistema nagusitik kanpo eta horren menpeko gisa leudeke, arlo fonosinbolikoan ziurrenera;
3. /m/ ere, arrazoi asko dago AEn ez zela uste izateko, maileguetarik eta fonosinbolismoetarik at, testuinguru sudurkarietan sortzen zen /b/-ren alofono gisa baino.

***3.3.3.*** Bokalak berariaz ez dira aipatzen (erreparatu 1957a-ko lan erraldoiaren izenburuari edo *FHV*-ko laburpenari), begi-bistakoa baita ez direla gehiegi aldatu akitanieraz geroztik (cf. NESCATO, CISON, SEMBE, UMMESAHAR… eta beren ordain modernoak). Beraz, oraingo bostak beren hartan utzi behar izan zituen: hiru irekiera-gradu, eta luze-labur bereizkuntzarik gabe; orain eskura diren datu guztien azterketarik hertsienetik ateratako ondorio honek D. Gilen gogoeta tipologikoen ondorioen bidez ateratakoak ere —SOV & VSO → bokal inbentario murritza, SOV → b. inbentario zabalagoa) bere alde dituela dirudi (ik. § 4.3.4).

/j/ eta /w/ irristariak berankorrak dira, era ezberdinetan sortuak; lehenak, aditz zaharretako *e-* aurrizkian izan ohi du iturburu nagusia; bigarrenak, diptongo zenbaiten hondar zatia ez denean, maileguak.

***3.3.4.*** Mitxelenarentzat, geminatuen bilakabideak adierazten du orduko euskaldunek hotsen indarrari begiratzen ziotela (geminatuak = luze → indartsu) eta ez euren ahostuntasunari, zeren eta geminatu ahostunak, ahostun izan arren, *fortis*-aren bitartez gauzatu baitzituzten: lat. BB > eusk. *p,* cf. ABBAS > *apaiz,* lat. AD VALLE(M) > *apal,* SABBATU > *zapatu* vs. gazt. *abad, sábado*. Berdin, talde erromaniko ahostunetarik ere eusk. ahoskabe: gazt.zah. *cobdiçia* > *gutizia* vs. gazt. *codicia.*

*f*-aren lekukotasunak ere beste hainbeste erakutsiko liguke: garai batean *b*-ren aldaera zen (*nafar* / *nabar),* eta orain, berriz, *p*-ren aldaera (*alfer* / *alper, ifini* / *ipini*). Garai zaharretan, bistan da ahostuntasuna ez zela *b* eta *p*-ren arteko bereizketa garrantzitsuena —*f* ahoskabea izanik *p* hautatuko zuten eskura zituzten hotsetan—, baizik eta ahoskera ahula edo indartsua den, eta *f* frikari izanik ahula izan eta honexegatik *b* hautatu. Bestalde, AE edo euskara zaharrean benetako ahostun/ahoskabe izan balitz, [f] batarekin

_ala_ bestearekin litzateke, baina ez bata _eta_ bestearekin; horrela izateak adierazten digu beste zerbait zela oposaketa mota horren gainetik.[84]

Lekukotasun zaharrenetako datuak ere alde datoz. Akitanierazko <TT> eta <CC> grafiak indartsuen adierazpide bide ditugu (vs <TH> hasperenduna). Horko herskarien banaketak erakusten digu, bestalde, _p_ bakana zela, ziurrenik _b_ ahularen aldaera kokagune indartsuan (adib., elkartuen bigarren osagaiaren hasieran: akit. _Seniponnis_ vs. ohiko _-bon(n)_. Bidenabar, iberieraz ere gauza bera dugula dirudi: _Estopeles_ vs _Beles, Vmarbeles_.

_3.3.5._ Herskarien eta txistukarien azpisistemak bat datoz neutraltze puntuetan (hitz-hasiera eta bukaera, ozen ondoren eta kontsonante ondoren): zilegi da pentsatzea, beraz, biak oposaketa bera direla. Hortaz, bi txistukari sail zeuden ahoskuneari dagokionez, eta bina artikulazio-modu: apikari frikari eta afrikatua, bizkarkari frikari eta afrikatua.

Lorpenik errazena dardarkari bortitzarena bide genuke (Mitxelena 1957a) hemen ahul/indartsu oposaketak baitirau egun ere dialekto gehienetan. Besteekiko ezberdintasuna: dardarkaria ezin da hitz-hasieran agertu. /L/ eta /N/-ri dagokienez, bi datu mota erabili zituen: bokalarteko testuinguruan nola jokatzen duten, batetik, eta akitanierako eta Erdi Aroko grafietan aurkitzen dituenak. Lehendabiziko testuinguruan _n_ eta _l_ guztiek ez dute berdin jokatzen. Maileguetan ikusten da hobekienik, baina badira aztarrenak ondare zaharreko hitzetan ere. Honela, _angelu, gula_ eta _coelu_-tik _aingeru, gura, zeru_ (Z _zelü_) dugularik, Mitxelenak _*sali, *gali…_ berreraiki zituen _sari/saldu, gari/galdu…_ bikotearentzat (_-l-_ ahula) baina ez _ilhe/ule_-rentzat (bestela _**irhe/ure_ genukeen);[85] orobat, _ahate_ eta _lehoi_ (< _*leohe)_ izanik _anate(m)_ eta _leone(m)_-etik, /N/ bortitza behar zuen _arrano_-k edo _baino_-k baina ez *_ardano_ ez *_bini_-k, _seni_-k eta _bai(n)a_-k.[86] Dardarkarietan ez da bilakabide aipagarririk bokalartean, baina bai hitz hasieran (protesia): _ropa_ > _arropa, ratone_ > _arratoi_, etab.; halaber, _muta cum liquida_ taldeak ondoko bokala tartekatuaz hautsi ohi dira /r/-ekin egindakoetan: _garau_ < _granu(m), daraturu_ < _taratru(m), boronte_ < _fronte(m)_, etab. Aldiz, hasierako herskariaren

84. Argudio hau berrikusi beharko litzateke; Hualdek (1997) _f_ < _*wh_ proposatu zuen (ik. zenbait etimologia Lakarra 2009a-n) eta, beraz, forma hauen kronologia AE baino askozaz modernoagoa litzateke.

85. _FHV_-z geroz _alaba_ (**_araba_) bortitzaren adibide gisa erabili izan da, _Araba_-renari kontrajarriaz (cf. errom. _Alava_ gordetzailea); adibide ona litzateke … ondare zaharrekoa balitz eta ez mailegu, _alha(tu)_ eta _ilhoba_ laguna bezala (ik. § 4.6.9). Bestalde, _estari_ ez dator _estali_-tik eta ezta _bidari bidali_-tik ere (< *_-hari_) beraz, maileguetako _abel-, zamal-_ (< _abere, zamari_) «bitxien» aurretik ere arrunta bide zen _-r_ > _-l_ hitz-eraketa zaharragoan: _zur_ > _zilhegi, zilbor_; _*bur_ > _bilbe, bildur_; _bar_ > _(b)al-de, (b)al-bo_; _gar_ > _gal-de_; _gor_ > _gol-de_; _her_ > _heldu_; etab.

86. _*Ba-(d)in + -a_ : _*ba-(d)in + -no_ > _bai(n)a / baino_ eta _*arran + -i_ : _*arran + -no_ > _arrain_ : _arrano_.

erorketa genuke albokoekiko taldeetan *laket < placet, loria < gloria(m), lau < planu(m)*, etab.[87]

*3.3.6.* Ezaguna zen AE ondoko euskarak [+/- ahostun] oposaketa neutralizatzeko joera zuela kokagunearen arabera, indarrean soilik bokalartean gordeaz;[88] Mitxelenak erakutsi zuen joera bera dela beste kontsonante-sailetan ere, bai txistukarietan eta baita ozenetan ere:[89]




*3.3.7.* Hasperena ere fonema gisa kokatu zuen Mitxelenak AEn, bortitz/ahul oposaketa orokorretik kanpo gelditzen zen kontsonante bakarra. Honetan guztiz urruntzen zen Gavelengandik, hark uste baitzuen (cf. 1920: 478) inongo oinarri etimologikorik gabea eta sortzez hain berankorra zela non Hegoaldeko euskalkietan inoiz horrelakorik ez omen zen izan eta gainerakoetan soilik berrikuntza bezala. Mitxelenak Luchairek (1877) erakutsi lekukotasun akitaniarrak ez eze Hegoaldeko Erdi Arokoak miatuaz ere, —gehi orduantxe argitaratu Lergako inskripzioa—, ikusi zuen /h/ zaharra zela euskararen eremu historiko osoan —are inguruko hizkuntzetarik deblauki bereizten zuena—, eta Nafarroaren zati batean x. menderako (erromantze *h*-gabearen eraginez) galdua bazen

---

87. Mitxelenak inoiz aipatu arren, garrantzia gutxi eman zaio CrV- soiltzeko beste bide bati (> CVr): hori da errom. *trollo* 'arrain balio gutxikoa' > eusk. *dollor* 'exkax'-en **torllo* > **dorllo* bitartez gertatu dena.

88. Amaieran ez dirudi herskaririk izan denik oso berandu arte (eta orduan ere ondoko silabako ahostunaren higaduraz): cf. *dut < duda-* (Err. *dud/dur*), *duk < *duga*, etab.; *estomak, blok* etab., mailegu oso modernoak dira eta *ot- < ogi, it- < idi*, etab. Erdi Aroko konposaketako lehen osagaiko alomorfoak. Ez da *p*-rik kokagune honetan, salbu eta hitz fonosinbolikoetan (*eup…*).

89. Mitxelenaren erronboak AEkoak balira bezala aipatzen dira maiz, baina ez da hala. Martinetek (1955: 548) argi utzi zuen hitz-hasierako bortitzen ahultzea latina eta euskara ukipen-egoeran jarri zirenetik aurrera gertatu bide zela. Berreraikitako sisteman herskari *fortis*-ak eta *lenis*-ak, biak ager daitezke bokal-arteko kokagunean nahiz hitz-hasierako kokagunean: sistema karratu bat proposatu zuten, beraz, AErako; gero, EBZn edo, erronbo bihurtuko dena.

ere,[90] XIII-XIV. mendera arte erruz lekukotzen dela Hegoaldean mendebalerago, Araba-Errioxan eta are Bizkai-Gipuzkoetan (ik. 3.-4. atalak).

Geografiatik eta lekukotasunetatik hitz eta morfemen analisira igaroaz, Mitxelenak *zahar, ahuntz, zuhur* eta beste *zaar* (edo *zar*), *a.untz* (edo *awntz, ajntz*), *zur* eta gainerakoak baino arkaikoagoak direla erakutsi zuen, hots, egoera zaharragoko silaba egitura eta kopurua gordetzen zutela, *ahate, ohore*, etab. beren uzkurdurak —*a(a)te, ôre*, etab.— baino zaharrago diren bezala.

Aurrerago joaz, Mitxelenak lau jatorri etimologiko aurkitu zituen /h/ historikoentzat:

(1) AE-ko leherkari bortitzak hitz-hasieran;
(2) *f-* latindar edo erromanikoak;
(3) **-n-* eta
(4) AEko **h.*[91]

Horiezaz landa, hainbat hasperen etimologiko zahar erori bide dira historikoki: hasteko, azentu ondoko guztiak edo erro berean bi zirenean ezkerretik lehendabizikoak. Orobat, historikoki ez da zilegi 2. silaba ondoko hasperenik, baina akitanierara jo gabe ere, ez zen oraindik hori egoera 1.000 urte beranduago, Donemiliagako lekukotasunetan, esaterako (ik. liburu honetako 4. atala). Mitxelenak —gero Igartuak (2001) bezala— bai *FHV*-ren 1. edizioan eta baita 2.enean ere, *eroritako* /h/-ak zituen arazo nagusitzat (*FHV* 525 eta lehen 219-220), ez (itxuraz) arrazoigabe sortuak Schuchardten, Trasken eta beste zenbaiten kontrara.[92]

***3.3.8.*** Azentua dugu gairik ilunena AEMren berreraiketan. Euskara modernoan dakusagun azentu hedatuena, hitz-azentua ez, baizik eta perpaus-azentua dena, ez da oso zaharra izango, herskarien bilakaera ezberdinak lotuta baitaude hitzeko kokagunearekin, hots, herskaria hitz-hasieran edo hitz-barnean egotearekin.

Hiru proposamen nagusi ditugu:

---

90. Datu eta hurbilketa berriak biltzen dira Julen Manterolaren 2015ko tesian, batez ere erakusleetan Nafarroan XVII. mendera arte gordetako hasperenez, horiexek dira gero *k-/g-* bilakatuak Aez, Zar, Err eta Nafarroa Garaiko zenbait hizkeratan eta ez alderantziz; ik. § 4.3.6.

91. Soilik hau dugu *h* < **h*; Janhunenek (2007) argiro erakusten duenez, aski arrunta da hots horrek hainbat jatorri ezberdin («laringal sekundarioak») izatea, bai uralikoz eta baita beste hainbat hizkuntzatan ere, euskara barne.

92. Honek ez du kentzen /h/-ren inguruko zenbait arazo aitortu izana; hauetako batzuez ik. § 3.5.

1. Martinetek azentu demarkatzailea (hitz arteko mugak bereizten dituena) hitz-hasieran kokatzea proposatu zuen, herskarien banaketa azaltzeko.
2. Mitxelenak, berriz, hitzaren bigarren silaban kokatu zuen, hasperenaren lekukotasun historikoak azaltzeko (inoiz ez 2. silabatik aurrera eta ezta bi hasperen hitz berean ere).
3. Hualdek azken silaban jartzen du azentu zahar hori; halere, ez du hasperenari buruz Mitxelenak ematen duen azalpena ezertan aldatzen eta, seguruenik, hark behinola AErako proposatua, orain EBZ edo ondokoa genuke.

***3.3.9.*** Mitxelenak (1979, *FHV*[2]) ondoko silaba egitura hau proposatu zuen AErako, iberieran ikusten zuenetik gertu:

(C)V(W)(R)(S)(T), non C = (edozein) kontsonante, R = ozenak, V = bokalak, S = txistukariak, W = irristariak, T = herskariak

Bi murriztapen ezarri zituen:

(1) hitz-hasierako C (neutralizazioen ondorioz) ondokoetako bat baino ezin daiteke izan: *b-*, *g-*, *s-*, *z-*, *n-*, *l-*;
(2) ziurrenik, inoiz ez ziren silaba batean aukera guztiak bete (*geurtz* 'datorren urtea' dateke osoenetarik).

Morfemaren tamainari dagokionez, iberiar onomastikako elkartu eta eratorrien forma kanonikoa «2 + 2» eta «2 + 1» dela suposatzen du, eta hizkuntza-egoera horretan 2 litzatekeela erroaren silaba kopuru handiena; horrelako zerbait proposatzen du euskara zaharraren konposiziorako ere.

**3.4. Ondoko ikerketak aitzineuskararen herskariez**

Ez da aurrerapen handirik izan alor honetan: salbuespenak salbuespen, Mitxelenak proposatutakoak bere hartan dirau, ia dena esana balego bezalaxe, eta denbora luzean zehar ia ez da ezer ukitu. Halere, badira hutsune nabariak: Guiter-en (1989) saio txikia alde batera utzita, gutxiegi da aldaketen kronologiaz (ik. orain Egurtzegi 2014ko eranskina eta abian diren Hualderen zenbait lan). Ildo beretsutik, ez dugu gehiegi aurreratu maileguetako geruzak identifikatzeko bidean.

Herskariak azaltzeko bide berri bi proposatu ziren duela urte batzuk: Trask (1985) eta Hualde (1997). Oro har, Mitxelenaren proposamenak baino azalpen botere txikiagoa lukete (herskariak bakarrik azaldu gogo dituzte), eta ez dute datu berririk

azaltzen (= etimologia bakar bat eskaintzen), ez galdera berririk erantzuten. Beraz, hipotesi egiantzekoak balira ere, ez bide genuke askorik irabaziko.

Traskek garrantzia handia eman zien neutralizazio batzuei, *lenis/fortis* sistema «egiazko» batean (hizkuntza zapoteketan, adib.) ezinezkoak baitziren, bere ustez: *beg(i)* + *gain* > *bekain, erreg(e)* + *bide* > *errepide, ez dator* > *eztator,* lat. *sabbatu* > *zapatu.* Honetan oinarrituta, askoz sistema bakunago bat proposatu zuen, kontsonante sail bakarrekoa:

| | | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|
| p | t | k | s | ś | n | l | r |

Testuinguru batzuetan (bokalartean, nagusiki) kontsonante geminatuak agertuko lirateke (*pp, ss, nn,* etab.). Proposamen honek duen ahulgunerik handiena datuen kronologian datza, hain zuzen: antzinako sistema baten ezaugarriak askoz geroagoko berrikuntzetan aurkitu nahi izan ditu. *Bekain* eta *errepide* ezinezkoak dira AEn, orduan ez baitzen herskaririk morfema bukaeran (elkartuaren bilguneko bokal eta kontsonante-erorketak eta gainerako hots-aldaketak Erdi Arokoak dira: akitanieran ez zen horrelakorik oraindik; cf. Gorrotxategi 1984, Ariztimuño 2012). Antzera *ez* + aditz konbinaketetan, partikula hori **eze* baitzen AEz. Gainera, azalgabe uzten ditu gorago egin ditugun galderarik gaitzenak: nola azal hitz-hasierako herskariak euskaraz bakarrik ahostuntzea, ez erromantzeetan? Nola bokalartekoak euskaraz bakarrik bere hartan egotea, ez erromantzeetan? Nola hauetan geminatuek ahostuntasuna mantentzea, baina ez iraupena, eta euskaraz alderantziz gertatzea? Trasken proposamena Hurch-ek (1991) eztabaidatu zuen; baina esanguratsuena, seguruenik, Traskek berak atzera egin eta 1997ko liburuan (124. or., etab.) Mitxelenaren sistemara bihurtzea bide genuke (hasperenarekikoak salbu, Trasken hurbilketa harenaren antitetikoa baita).

Hualdek garrantzi handia ematen die kontsonante ondoko posizio askotan gertatzen diren neutraltzeei, *haritz* + *-di* > *harizti, ardan* + *-tegi* > *ardandegi…* edo *mendi-tik* + *dator* > *menditi tator* bezalakoei. Bere ustez datuen arabera ez da herskari sail bietan AEtik gaurko euskarara funtsezko aldaketarik proposatu beharrik. Aski da aldaketa bakarreko hipotesiarekin: kontsonante ondoko asimilazioen ondorioz, hitz-hasierako kokagunean [+/-ahostun] oposaketa galtzeko zorian izan zen garai batean, eta gero, alboko hizkuntzen eraginez, oposaketa berriro indartu omen zen. Gorago esan bezala, ez da etimologia berririk aurkezten ez lehenagokorik hobetzen, eta datu asko ez AE garaikoak (ezta EBZkoak ere) baizik eta Erdi Arokoak eta are beranduagokoak dira, horrela bere indar gehiena galduaz. Gainera, Egurtzegik (2018) Hualderen proposamenaren egiantzekotasuna are urriago egiten du gogoratzen duelarik *menditik dator* > *menditiitator* edo *behetik gora* > *behetikora* bezalako bilakabideetarik sortutako *tator* edo *kora* ez direla beste testuinguru batzutara hedatzen (***hura tator,* ***ni kora*

*noa*, etab.) eta, beraz, ez dela hor Hualderen hurbilketak beharko lukeen berlexikalizazio ugaririk eta, horrenbestez, aldaketa erraldoirako biderik (ik. orobat § 4.3.6).

### 3.5. Hatxe historikoak

***3.5.1.*** Gorago (§ 3.3) ikusi denez, Mitxelenak /h/ gehienak lau sail etimologikotan bildu eta beste hainbat desagertu direla frogatu ondoren, zenbait arazotsutzat edo are oinarri etimologikorik gabekotzat ditu: [93]

1. Hitz-familia barneko ezberdintasunak (*hi* → *hire* baina *eure*) edo hizkera ezberdinen artekoak: *ibai/hibai, ildo/hildo, auzi/hauzi, erro/herro*, etab.; [94]
2. Z-zko monosilaboetakoak: *hon, hor, hur*… («orokortuak»);
3. *Vih* egituretan, hauek ere «orokortuak» (< **Vi*): *saihets, oihan, oiher, aihen, oihu, oihal*…; marka bedi ez (2)-n eta ez (3)-n Mitxelenak ez duela proposatzen etimologia bakar bat, bere ohiko prozeduraren aurka;
4. VøV > VhV: *ur* + *alde* > *ualde* > *uhalde*;
5. «*-h-* morfologikoak»: *on* + *erran* > *onherran, on* + *eritzi* > *onheritzi, dei* + *adar* > *deihadar, jan* + *ari* > *janhari, gau* + *-ari* > **gauhari* > *aihari/afari*, etab.

Nolanahi ere, ezin ahantz liteke *FHV*[2]-ko ondoko pasartea, non nabarmena den egilearentzat ez «*h* arrazoigabeak» baizik eta *h*-erorketak zirela ardura nagusia: «El texto parece dar a entender, erróneamente, que el número de los casos de discrepancia respecto a la aspiración es más bien pequeño» (…) «añado, sin ánimo de ser exhaustivo, algunos otros razonablemente seguros en que *son siempre las formas complejas, más largas, las que carecen de* h» erantsiaz, *han ~ anartean* edo **har ~ are* adibide argigarriekin (525; nire etzanak [JLA]).[95]

---

93. Beti bezala, eredugarri gertatzen da Juha Janhunenen «The primary laryngeal in Uralic and beyond» (2007). Ezinutzizkoak dira euskarazko hasperenaren inguruan Iván Igartuak egindako saio tipologiko bikainak (2002, 2006, 2008, 2011, 2015). Jose Ignazio Hualderi zor zaio /h/ sudurkariaren aurkikuntza (1993); hasperenari buruzko azken lanen artean cf. Egurtzegi (2014).

94. *heure*-k [**hi-haur-e*] *h-* ez izatea (forma analogiko berantiarrez landa) erraxki azal liteke: 2. /h/-ak 1.a disimilatu zuen noizbait (berandu segurki) eta ondotik, erakusleak gramatikalizazioan aurrera egin zuenean, barneko /h/ galdu zen; 2. horren erorketa erregularra dugu, gradu guztietan (**nihaur, *guhaur, *zuhaur*) eta sing. nahiz pl.ean gertatu baita. *Ihaur, zuhaur*, etab. gero berregindako formak dira, *neroni* (< **neur-oni*), *geronek* (< **geur-onek*) eta gainerakoak bezala.

95. Ohar bekio lehen edizioko ondokoari ere: «Hay que añadir que, dado lo confuso de la situación moderna, es difícil precisar qué consonantes desaparecidas en posición inicial dejaron como resto una aspiración ni en qué condiciones pudo después perderse ésta. Cabría admitir, para

***3.5.2.*** Geroztik (cf. Lakarra 2009a, 2009c, 2010a, 2014b) baiezta genezake «arrazoigabeko» edo «halabeharrez erantsitako» hainbat /h/ guztiz erregularrak direla: horrela *harea, hazeari, hautatu, hogen* edo *hagin*-ena maileguetan nahiz *haragi, herio, heuragi, heuskara, hibai, hodei, hogei*-rena ondare zaharrekoetan; guztietan *h-* hori etimologiari zor zaio [$*h_{3/2} > h_1$], lehenago barnerago (3. edo 2. silaba buruan) zen **-n-* batetik sortua delarik (cf. /h/-aren 3. jatorria).

Schuchardtek eta Gavelek aldarrikatu eta bestek erabili «*h* gehiketek» ez dute oinarririk silabazioan ere, eta *behar, lehen, zahar* eta gainerakoetan *-h*-ak «hiatoak hausteko» edo sortu direnik pentsatzeko arrazoirik ez da: cf. *xahu* (< *sanu*), *bahe* (< **uane*), *aihotz* (< gask. *afodz*). Are gehiago, Mitxelenak uste zuenaren kontra, *(C)Vih-* egituretan (*saihets, oihu,* goiko *aihotz, eihera*…) *-i-* da gehitu dena —inoiz **ñ* > *in* batez— eta ez *-h-*. Ezin nahas, bada, bokalarteko /h/ kokagune bertsuko /g/ (> /r/) batekin (*zagar, agate, ago*, etab.), dela geografia, dela kronologiagatik —*VøV* > *VgV* aski berantiarra dugu— eta, bereziki, beren izaeragatik: /h/ etimologikoa dugu baina ez, aldiz, /g/, aipatuetan eta beste askotan ere (*lagin, Murugarren, -gune*, etab.).

Ez dirudi azentuaren botere sortzaileari nahiz hiatoak hausteko borondateari zor zaizkionik ondokokoak ere: *uhalde, ohalano, zuhaitz* eta beste batzuetan *-h-* horiek **-r* batetik datoz, *-h* horrek ezkerrerago *h*-ak disimilatuaz: *hur* + *alde* > **huh-alde* > *uhalde, *hor* + *alano* > **hoh-alano* > *ohalano, *her-tzi-(te)* > **hehts*(*ean*…) > *etse, *hor* + *-tz* + *-so* > **hohtso* > *otso*, etab., nekez erakuts litekeelarik bigarren osagaiaren hasierako *-h*-rik (pace Igartua 2006).[96] Hemen dugu, bada, Mitxelenaren lauez gainera, /h/ etimologikoen 5. iturburua.

***3.5.3.*** Beste zenbait *h-* (6. iturburu etimologikoa) mailegu gaskoietan gertatzen dira: *hami, hedatu, hein, herratu, heri, hobi, hodi*…; gainera, baliteke gaskoitik sartzean *h-* zeraman zenbaitek hori galtzea: *eme* ez da *hémne* 'femme, epouse'-tik urruti, ezta *arbi hárbi* 'gross navet'-tik eta *aupa houpà* «prendre un enfant et l'élever sur ses bras»-etik. Orobat, *horabiàt,-ade* 'fourvoyé,-e… mis hors de lui par la colère ou toute autre cause…' da *zorabiatu*-ren oinarrian, *harivari* 'action de folâtrer, de faire un peu le fou' *txaribari-*

---

citar una sola posibilidad, que en palabras complejas, al encontrarse la inicial a mayor distancia del acento que en la simple de que procedía su primer elemento, haya desaparecido la aspiración que en éste se conservó: sul. *ardai* 'yesca', sin duda oxítono, cf. guip. *ardagai*, lab. *hardo* (vid. infra, 12.16)» (219-220). Ik. 146. oh. ere.

96. *ibar, idor* baina *hibai, hidoi *hur*-etik: guztietan **-r* > *-h* eta **h…h* > **ø…h* gehi **h* > *ø* / — *C* baina soilik hirugarren eta laugarrenean $*h_3 > h_1$; gainerakoetan hori ezinezko da $-*h_3-$ < **-n-* falta baitute.

renean, _hurgà xurgatu_-renean… Ez litzateke harritzekoa talde honetara ekarri beharra Mitxelenaren 2. taldeko (lat.-errom. _f-_ > eusk. _h-_) hainbat edo ia guztiak: hots, lat.-errom. _f-_ > eusk. _b-_ (gero _p-_, _f-_), errom. _h-_ > eusk. _h-_ (gero ø- edo _(t)x-_ > _z-_).[97]

**_3.5.4._** Gaskoitik hartutako maileguek lekukotasun garrantzitsua ematen dute _-Rh-_ (_lh, nh, ñh, rh, rrh_) askoren izaera etimologikoaz eta kronologikoaz (7. iturburu hau bide da orain artekoetan azkena): _alha_, _arhin_, _elhe_, _enhe_, _oihu_, _olho_, _orhe_, _orhoitu_, _unhatu_, _unhil_ eta beste zenbait gaskoitik hartu _halà_, _hariu_, _helè_, _héne_, _houà_, _houlhòu_, _hourà_, _horehèyt_, _hoùne_, _hounìlh h_-etarik atereak ditugu. Horrenbestez, _hVR_ > _VRh_ metatesia[98] da hemen, eta hauek guztiak 6. /h/-koen kide dira izatez.

**_3.5.5._** Ondare zaharrekoen artean ere, —_ilherri, ilhotz… *h…h_ > _ø…h_ disimilaziotik datozenez landa—, badira _erhi, ilhun, ilhargi, al-/elhargun, erho,_ etab. eta, beraz, _*hVR_ > _VRh_ pairatu bide dute; interesgarria dugu _erho_ (cf. _haragi_), nahiz _anhoa_, hauetan h- baino lehen *$h_3$ izan baitugu: cf. _*e-ra-non_ eta lat. _annona_. Hortaz, *$h_3$ > $h_1$ eta ondoren _*hVR_ > _VRh_ izan ditugu, ez *$h_3$ > $h_2$ «zuzenean», bestela _**arhea, **balhea_, etab. baikenituzke. Hori gertatu da _onherran, onheritzi_ eta _onhetsi_-rekin ere: _hon_-en _h-_ etimologikoaren metatesia eta ez inongo «_-h-_ morfologikoren» gehiketarik: zergatik ez, bestela, _**gaizkerran, **gaizkeritzi, **gaizketsi_? (Cf. _gaitzerran, gaitzeritzi, gaitzetsi_), _*h_ > _k_ bilakabidearekin _Amezketa_ edo _bazkari_-n bezala txistukari ondoren; ik. § 4.3.6 akabuan.

**3.6.** Ia beste edozein familia eta hizkuntzatan ohi legez, berreraiketa atzeratuago ibili da AEren morfosintaxian; berreraiketa fonologikoan erraz antzematen den partaideen arteko lotura eta antolamendua nekez aurki genezake morfosintaxian, eta fonologian ere garai ezberdinetako osagaiak atera bazaizkigu, zer esan urrutitik ere horrelako barneko batasunik ezin izan dezaketen deribazio-atzizkiez,[99] aditzaren plural markez (cf. _gaitean, gara_ vs. _gatoz, gabiltza_) edota deklinabidearen 1. zein 2. mailako osagaiez eta horien konbinaketaz.

---

97. Baliteke euskarak inguruko hizkuntzen hasperenen bilakabidean izan omen zuen egitekoa berpentsatu beharra datu hauen aurrean; cf. Quilis (1996-97) eta han aipatu lehenagoko bibliografia eta oraintsuago Igartua (2011).

98. Metatesiaren tratamendu sinkroniko orokor baterako ik. Egurtzegi (2011). Badira oraindik Caminok (2014) markatutako hainbat _-b-, -d-, -g-_ > _-h-_ ere BN-z (_ibili_ > _ihili_, etab.).

99. Nabarmena da eratorpenaren hedadura fenomeno berantiarra dela, eta literatur euskarari zor zaiona neurri handi batean: ik. Lakarra (1997a), Sarasola (1997), Bueno (2004, 2006) eta orain Blanco (2014).

Morfologia diakronikoan Schuchardten eta Lafonen izenak ezinbestean aipatzekoak dira (Uhlenbeckez ik. § 3.2), jakina, nahiz eta lehendabizikoaren kasuan hots-aldaketa legeez zituen ikuspegi eta jokabide bereziek euskalaritzarako Mitxelenak behin baino usuago (cf. § 3.3n 1957b-ko aipua) kritikatutako ondorio gaiztoak izan; Lafonek, halaber, badu hainbat saio aditz zaharraren sistemaz eta lekukotasun arkaikoez, bere xvi. mendeko aditzarekiko 1943ko tesia osatuaz (ik. orain Mounole 2011 [2017]). Beti bezala, ezinutzizkoak dira Mitxelenaren hainbat lan, berariaz morfologiaz izan ez arren, hala nola *FHV* eta *Apellidos Vascos*; hor dira toponimiazko zenbait edo *RS*i buruzkoak ere —datibo- eta futuro-marka arkaiko batzuez Lafonen usteak eztabaidatuaz—, eta baita han-hemen barreiaturiko ohar interesgarriak ere atzizkien formaz edo postposizioen balio eta jatorriaz (1971a) edo aditz-konposatuez (1977), etab. [100]

«Toponimia, léxico y gramática» (1971) aipagarri da pluraleko deklinabide modernoaren ikerketarako oinarriak jartzen baititu: *alde/albo, behe/azpi, -zu/-tsu, gibel/atze/oste* eta *aurre/aitzin*, bezalako atzizki eta postposizioen etimologia eta kronologia toponimiaren bidez ikertu ondoren, *-aga* eta *-eta* ez eratorpen-atzizki baizik eta flexiokoak zirela —eta, horrenbestez, nekez mailegutzat jotzeko moduakoak— ezarri zuen hitz-eraketan zuten jokaeragatik (***harraga, **artata*, cf. *hardui, artadi*) eta baita beren sintaxiagatik ere —*Harri-leun-aga, Haitz-urdin-eta* (ADJ- __) ~ *Sagas-ti beltza, Paga-di gorria* (I- __ ADJ) baina ***Harri-aga leun, **Haitz-eta-urdin ~ **Sagar beltz-tia, **Paga gorri-dia*—, arras ezberdina haiei buruz eta oso antzekoa artikulu eta erakusle historikoei, h.d., IS osoari lotzen zaizkio eta ez horren barneko nukleo bakoitzari.

Alabaina, Trasken 1977ko aditzaren egituraren eta sintaxiaren historiari buruzko lana izan liteke morfosintaxiaz garrantzizkoena azken 40 urtean. Horren ondoren garbi da *d-* (hobe, *da-*) ez zela ez 3. pertsonaren marka —ezta denborakoa ere gero De Rijkek (1992) aurkeztu eta bai Traskek berak (1997) eta beste askok onartu bezala—, baizik eta aspektukoa. Halaber, bai marka hori eta baita 1977an «modal» deitu gainerakoak (*b-, z-, l-*, ø- esaterako) noizbait pertsona marka gisa berranalizatu ziren —cf. eskubira diren pertsona-marka aurretik ezarri *-ki-* «dative-flag» delakoa— preposizio edo multzo-aditzak ziren Trasken ustez. Hau guztia hizkuntza eransleetako SOV hurrenkeraren aurka eta gero —zehaztasun garrantzitsuekin— Gómezek (1994) eta Gómezek eta Sainzek (1995) aldarrikatu VO hurrenkera hobestearen alde mintzo da. Artikuluan datiboaren berankortasuna ere markatzen da, orobat, eta baita ergatiboaren jatorriak zein izan zitezkeen ere, horrenbestez euskara zaharraren morfosintaxiarekiko ondoko

100. Honetaz, zehatzago, *ihar/jar* «izenki ilunaz» egindako gogoeta laburrez badira zenbait kritika § 4.4.6.1ean; alabaina, artikuluaren gainerako zatietan aditz jokatugabearen historiari buruzko ohar interesgarriak dira.

ikerketa guztien ezinbesteko abiapuntu bilakatuaz, nahiz atzeraka egin 1997ko liburuko testu nagusian (baina ez, ordea, gramatikako atalaren eranskinean!). [101]

Trask (1995), aditz jokatugabeaz, ez da aurrekoan bezain berritzaile, nahiz biltzen dituen lehenago (1990) erakutsi *-n* eta *-i* partizipioen jatorria bakarra zela eta beste hainbat gauza jakingarri; Urgellek (2006d) aditz-izenaren eta *-te, -tze, -eta*, eta gainerako atzizkien kronologia eta hedaduraz zehaztasun interesgarri ugari ematen du (ik. hemen § 4.4.6.5 aditz pluralez). Lakarra (2006b)-n, nahiz funtsean aditzaren ezkerraldeaz aritu, bada *-ki* eta *-tsi* atzizkien jatorriari buruzko atal bat.

Gómezek (1994) Trasken (1977) lanaren hainbat alderdi garatu zituen, ideia berriak ere gehituaz: esaterako, absolutibo, datibo eta ergatiboko persona-markak bakarrak direla eta ez askotarikoak Traskek zioen legez, honela bistakoago eginaz Traskek bezala aipatu bai baina garatu ez zuen aditz zaharraren «izaera inpertsonala». Halaber, konkordantzia-marken hurrenkera azaltzeko osagaien hurrenkera-aldaketa izan zela proposatu zuen, SOV hizkuntza batean persona-markak aditzaren ondotik izatea zail baita ulertzen. Honegatik, Gómezek eta Sainzek (1995) izenordainak aditzari lotu zitzaizkionean euskarak aditza esaldiaren hasieran zuela aldarrikatu zuten, hizkuntza zeltiko modernoek (ez, ordea, harekin kontaktuan izan zirenak) eta baita hainbat hizkuntza afroasiatiko edo austronesiarrek legez. Hau da, VSO edo VOS hizkuntza zela, ez SVO Traskek uste bezala eta are gutxiago SOV, euskara historikoan legez. Haatik, esaldi-hasieran duten hizkuntza horietan bezala, aditza (inperatiboaz landara, bederen) ezin koka liteke hasiera absolutuan eta hortik partikulak ezartzea aurretik: *betor aita etxera* / ***dator aita etxera,* baina *badator aita etxera*.

Manterolak 2006az geroztiko hainbat lanetan hizkuntza eransleetan oso ezohiko fenomenoa den (Himmelmann) artikuluaren gramatikalizazioa ikertu du, bereziki bere 2015eko tesi erraldoian. Deklinabide definituaren morfologia berreraiki du eta zehazki miatu ditu horren lekukotasunik zaharrenak (XV-XVI. mendeetako testuak, are geroztiko interesgarriren batzuk, eta Erdi Aroko onomastika);[102] oro har, deklinabidearen

101. Azkarate eta Altunaren liburua (2001) pedagogiaren aldetik baliagarri izan zitekeen lanabes bilduma bat zen, nahiz zorigaitzez tituluko «morfologia historiko» osoa izatetik urrun gelditu (aditzaz eta hitz-eraketaz ezer gutxi dakar). Azkenik, De Rijken (1981) eta gainerako lanetan datu morfologiko eta sintaktiko interesgarri asko da, baina ekarpen garrantzitsu gutxi diakronikoaren aldetik.

102. Euskalari guztiek onartua zuten **-har* > *-a* (cf. B á 'ERAK.' / -à 'ARTIK.') eta, beraz, **-ha* behar zuten tarteko; orain 2.ean ez dugu izartxoren beharrik Manterolaren lanaz geroz, hainbat lekukotasun baititu Erdi Aroan. Bidenabar, lehen ere —hots, erro monosilabikoaren teoria baino lehen— *-zaha* jatorriz ezin izan zitekeela atzizki soila antzematen erraxa zen edozeinentzat: 1) ez da atzizki soil bisilabikorik; 2) ez da /h/-rik inflexioan; gainetik, (3) *-ha* gehienetan bada ere ez

berreraiketa-eredua ez-eranslea da: erakusleak osorik, deklinaturik eta higaturik atxiki zaizkie izenei, marka morfologiko bakoitzean ezaugarri gramatikal bat baino gehiago bilduaz.

Egile honen ikerketek morfologia diakronikoaren beste alderdi batzuetan eta hortik landako ondorio garrantzitsuak dituzte, hizkuntzaren ergatibitate «erdibitua»-ri dagokionez, demagun: horrelakoa ez aditzean esan izan den bezala baizik eta erakusleen pluralean eta, beraz, horien gainean eraiki deklinabidearen garairik zaharrenean genuke (ik. Manterola 2017) —*haiek etorri dira* = *haiek egin dute* → *gizonak etorri dira* / *gizonak egin dute*. Orobat, artikuluen garapenaren kronologiaren inguruan —ez da horren arrastorik «Auñamendiko euskaran», hots Aragoiko eta Kataluniako ustezko euskal jatorriko leku-izenetan—,[103] baita deklinabide definituaren azentueretan, erakusleen berreraiketan, /h/ak morfologizaturik Nafarroa Garaian fonema hori galdu ondoren izan zuen iraupen luzean, etab.[104]

## 4. HISTORIAURREKO EUSKARAREN AZTERKETA. II. AITZINEUSKARA ZAHARRERANTZ

> (…) Après un si long délai il est facile de trouver à corriger, à redire, à reformuler dans les *Origines*. Presque tout ce que Benveniste dit au sujet précisément de la formation des noms en indo-européen est pour moi inacceptable. Mais cela ne change en rien mon appréciation sur ce livre,

---

da soilik *-(t)za* ondoren azaltzen. Bestalde, Manterolak **ha* berreraikitzen du erakuslea (*-r* gabe) eta, izan ere, CVC > CV delarik gramatikalizazio primarioa (cf. § 4.4.3.2), ez zuen *-r* horren premiarik; hurbilketa berak egoki dirudi *be-* kidearentzat.

103. Ik. Salaberri (2011) Corominasen lanen zenbait alderdiri buruz; bibliografia ugari da baina ez guztia asebetetzeko euskalaritzaren aldetik.

104. Bitxia benetan Veleian 2004-2005. urteetan «aurkitu» omen ziren III-VI. mendeetako ustezko euskal testuetako artikulu ugariak (*sua, lurra, ura, arraina*…, beti < h > gabe) A. Picaud-ek mila urte beranduago artikulurik gabe zekartzan hitzetan euskalariak (cf. *TAV* eta Azkarate & Altuna 2001) aspaldi ohartu legez; Picaudek XII. mendean oraindik soilik definituetan dakar: «dominam *andrea*», «dominum domus *iaona*», «presbiterum *belaterra*», «Deum *urcia*», «domum *echea*», «reguem *ereguia*» ez baitzen oraindik kontaezinetara hedatua («panem *ogui*», «uinum *ardum*», «carnem *aragui*», «piscem *araign*», «tricticum *gari*», «aquam *uric*»). Soilik XV. mendearen akabu-akabuan (ia lau mende geroago) ditugu von Harf-en zerrendan «*ogea* broyt, *arduwa* wijn, *oyra* wasser, *aragi* fleysch, *gasta* keyss, *gaza* saltz, *oluwa* hauer, *huetza* stroe, *hytzokosanma* eyn wirt» (*TAV* 63). Ez da esan beharrik onomastikaren lekukotasuna artikuluaren hedadura berantiarraren alde (Behe Erdi Aroan) erabatekoa dela.

> une oeuvre séminale dans l'histoire de la linguistique moderne. On ne s'attend pas à ce que la physique atomique de 1935 soit celle de 1983. Au contraire tous les étudiants de physique actuelle sont présumés savoir, et son examinés sur des choses totalement inconnues aux plus grands physiciens du monde il y a 50 ans. Ce n'est que naturel, et il en est de même en linguistique. L'indo-européen actuel n'est pas à puisser aux livres, même ceux qui ont fait époque et dont la connaissance parfaite est indispensable, obligatoire. L'indo-européen actuel est dans les esprits de nos étudiants et nos auditeurs. Espérons seulement qu'il voie le jour, pour que nous puissions en profiter (Watkins 1984: 294).

Meilletek bere iritzi famatu bezain ezkorra bota eta ia 100 urtetara hizkuntzari ahaiderik aurkitu ez zaion arren eta nahiz, horrenbestez, benetako gramatika konparaturik egiterik ez izan, ez dugu haren historiaurrean aitzinatzeko ezinik, gramatika-egituren eta ondare zaharreko lexikoaren azterketa finagoen bitartez. Aitzinamendu hau, kanpoko laguntza zuzena (mailegaketaren azterketa) agortu edo ia agortu ondoren, hizkuntzaren beraren barnetik (ondare zaharraren analisitik) eta teoria linguistikoak eskuratzen dizkigun argudiaketa egokietarik (barne-berreraiketaren eta paralelo tipologiko-diakronikoen bidez) erdietsi litezke.[105]

Egokiro eta alternatiba sinesgarririk gabe, azalpen bikainak emanaz eta benetan egindako edozein hizkuntzalaritza diakronikoren oinarriak jarriaz jardun duen paradigma aldatu egin behar dela argudiatzea ez da erraz. Ezaguna da (cf. § 1.3) berreraiketa bat aldatzeko edo berregiteko Haasek emandako (1969: 46-51) argudio eta bideak bitan banatzen direla:

1. lanabes eta datu gehiketak eskainiak —(a) hizkuntza edo aitzintzinhizkuntza ahaide berriak eta (b) mailegu zahar artean ezezagunak— eta
2. lehendik ezagutzen ziren lanabesetara hurbiltzeko bide berriak.

Euskarari ahaideak bilatzeko *FHV* ondotik izandako saioek ezer aipagarririk lortu ez dutenez (ik. § 2) eta —Mitxelenak hamarkada bat ondoren pentsatu bezala—[106] funtsean

105. Ik., esaterako, Haas (1969) Ameriketako hizkuntzen berreraiketaren metodologiaz eta Pulleyblank (1992) aitzintxinerarenaz eta, bereziki, Campbellengandik hartutako kapitulu honen hasierako aipua.

106. «Es evidente que, en materia de etimología, estamos cerca, demasiado cerca, de un límite; el de la accesibilidad de los medios actuales de reconstrucción. He repetido, demasiado quizá, una opinión que me parece difícil de refutar: en el estado de cosas actual, no hay más que dos modos de etimología vasca posibles. Están, de un lado, los préstamos, de linaje latino-románico en último término en la inmensa mayoría de los casos; queda mucho por aclarar, pero es más

mailegu latino-erromanikoen lekukotasuna agortua izanik, ezinbestean bilatu beharko ditugu lehendik ezagututako lanabes berberak sakonago aztertzera garamatzaketen hurbilketa berrietara (cf. Schmidt 1992 IE alorrerako).

Aurreko lanetan markatu bezala, ondoko alderdietan aurki litezke aurreko paradigmak berreraiketa eta etimologian izan litzakeen arazorik larrienak:

a. gutxi garatutako kronologia eta periodizazioa;
b. AE eta EBZ ez beti sistematikoki bereiztea;
c. ardura ia bakarra fonologiarekiko, nahiz (cf. § 3.6) *FHV*-n eta egilearen beste hainbat lanetan ikerketa morfologiko zein gramatikaletarako ohar, iruzkin eta hipotesi garrantzitsuak izan;
d. paradigmaren beraren hainbat aurkikuntza larriren garapen eta hedadura falta,
e. euskara historikoaren tipologia ia betierekoa bailitzan hartzea;
f. forma kanonikoarekiko arreta falta eta —oro har— forma berreraikien polimorfismo ia erabatekoa…[107]

Edozein hurbilketa alternatibok ahulezia eta hutsune hauek konpontzen saiatu behar luke, nominalismo agor eta berreraiketa- zein azalpen-gabezian erori gabe.

### 4.1. Erroaren Forma Kanonikoaz

Har ditzagun Mitxelenaren etimologiak;[108] era askotako formak aurkitu ahal dira bertan: monosilaboak, bisilaboak, polisilaboak, V-z zein C-z hasiak, C bat edo gehiago nahiz -V amaieran, etab. Antzeko ikuspegia zuen Uhlenbeckek 1942an euskal erroak

---

bien cuestión de detalle y de precisión. En otras palabras, no iremos mucho más lejos del estado actual, salvo por lo que respecta al rigor y a algún que otro descubrimiento aislado que todavía pueda hacerse» (Mitxelena 1970b: 308).

Egia da hor bertan beste bideari ere (ondare zaharraren bitartezkoari) ez ziola botere handirik aitortzen, baina bai monografia hori eta bai ondoko beste zenbait —1977ko aditz konposatuei buruzkoa, adibidez— maileguak utzi eta beren-beregi barneko azalpen hori garatzeko funtsezko saioak dira.

107. Mitxelenaren hainbat etimologia ez datoz bat egileak iberikoarentzat zein euskararik zaharrenarentzat hobesten zuen forma kanoniko bisilabikoarekin (ik. § 3.3): **enazur (> azur / hezur*) eta **ardano* (> *ardan-, ardo*, etab.), haren paradigman ere ezin izan zitezkeen analisien gailur, beste sakonago batzuen abiapuntu baizik.

108. Arbelaiz (1978)-an bilduak dira *FHV*-ren 2. edizioa baino lehenagokoak; haren Obra Guztien (Lakarra & Ruiz Arzalluz arg., 2011-2012); xv. liburukian horiek eta 1987 arteko gainerakoak ere badira. Ik. orobat Lakarra (2003)-ko eta Lakarra, Manterola & Segurola (2016)-ko analisiak.

sailkatzerakoan: monosilaboak —bokalez, diptongoz, kontsonantez, afrikatuz amaituak (ia antzera hasierei dagokienez), forma erreduplikatuak—, erro bisilaboak —ohikoenak: VCV eta CVCV, VCVC eta CVCVC, VCCV eta CVCCV, VCCVC eta CVCCVC, diptongoarekin, etab.— erro trisilaboak edo (oso bakan) are handiagoak; cf. Lakarra (1998a), etab.

Benvenistek duela 80 urteko tesian aurreko aitzin-IE berreraiketaz aurkeztutako kritika aldaketa gutxirekin egokitzen zaio oraintsu arte AErako egindako estandarrari:

> Ce qu'on a enseigné jusqu'ici de la nature et des modalités de la racine est au vrai, un assemblage hétéroclite de notions empiriques, de recettes provisoires, de formes archaïques et récentes, le tout d'une irrégularité et d'une complication qui défient l'ordonnance. […] On serait en peine de justifier et même d'énumérer complètement tous les types de racines qui sont attribués à l'indoeuropéen. Il y a ici un abus de mots qui trahit une doctrine indécise. On n'obtient pas de l'indo-européen en additionnant les diverses formes indo-européennes d'un thème verbal ni en projetant dans la préhistoire des particularités d'un état de langue historique. Il faut essayer, par de larges comparaisons, de retrouver le système initial sous sa forme la plus simple, puis de voir quels principes en modifient l'économie (1935: 147-8); ik. Lakarra (1998a, 2003).

Ezin manten genezake AEn goiko erro-eredu horiek guztiak zirenik, eta ezta forma kanonikoa bisilaboa zenik ere; silaba-murriztapenez landa (ik. Mitxelena 1979a, Artiagoitia 1990 eta Jauregi 2007), dagoeneko Lakarra (1995)-ean erroari buruzko beste batzuk ere eman ziren:

1. **CV, **VC gertatzen da lexiko arrunt monosilabo modernoetan: *har, gatz, lan…* Aldiz, CV eta VC (*ni, gu, ha, al…*) aurkitzen dugu partikula gramatikaletan; hauetan badira, gainera, *edo, eta, ala…* bisilaboak ere, baina mailegu (*omen*) nahiz amalgama sekundario: **e- + *do(n), *e- + da…*; ik. § 4.4.3.2. Uralikoan ere (ik. Bakrò-Nagy 1992) partikula gramatikalak sistematikoki urruntzen dira lexikoaren forma kanonikotik (CV(C)CV) eta antzera IEz (Gamkrelidze & Ivanov 1995) eta ongi ikertutako hainbat familiatan. Salbuespenak oso urriak dira eta urrituaz doaz: *su* < *sur/sun, lo* < **don,* cf. *lohi* eta *eman / eramo, ke* < **gen*, etab. Bestalde, Mitxelenak *hor, hun, hon* eta beste monosilaboetako *h*-ak «gehiketatzat» zituen baina ikusi da etimologikoak direla, are CVC forma kanonikoak damaigun argudiaketa erantsiari kasu egin gabe ere; cf. § 3.5.
2. Badira hainbat fonosinbolismo monosilabiko ere, CVC-ren ispilu-irudi dirudítenak, hain da larria beren urruntasuna gauzatutako hots-konbinaketei (CC-, -CC nahiz -VV-) eta are hots bereziei dagokienez: *dzaust, brast, krask, txist*, etab. Hau berau aurkitzen da IEz edo aitzin-uralikoan, fonosinbolismo eta

onomatopeiek lexiko arruntaren ispilu-irudia dutelarik (cf. Gamkrelidze-Ivanov 1995 eta Bakrò-Nagy 1992, hurrenez hurren). Ohar bedi fonosinbolismoetan usu agertzen direla CC-, -CC nahiz -VV- ere (*brast, dzaust*, etab.), eta hauen forma kanonikoa lexema arrunten ispilu iruditik gertu ibili ohi denez, ikerbidetzat hartu ohi da hura eskuratzeko; gure kasuan froga erantsi bat dugu euskal lexikoi zaharreneko CVC egituraren alde.

3. **TVTV erro bisilabiko soiletan; hots, izan badira *bake, katu, bide, gabe, begi, dago, pupu, kuku, titi*, etab., baina mailegu, konposatu/eratorri eta fonosinbolismo (ugari) dira (Lakarra 1995). Honenbestez, nekez pentsa genezake erro-eredu hori zaharra denik euskaraz, gertakari hau ezin izan bailiteke anekdota hutsa: herskariak eta bokalak ditugu hots ugarienak euskaraz eta silaba irekiak naturalenak eta unibertsal bakarrak.

Bistan denez, AEk gainerako familiek bezala forma kanonikoari dagokionez erro lexikoak / erro gramatikalak / fonosinbolismoak bereizteak sendotu egiten ditu gure analisi orokorraren oinarriak, nahiz horrek ez duen kentzen etimologia bakoitza justifikatzeko familia jakin bati dagozkion xehetasunek balio dutela soilik, ez lege orokorrek.

1995ean datu eta murriztapen berri hauek azaltzeko zera proposatu nuen, AEz (AEZn, behintzat) erroa CVC monosilaboa zela. Baieztapen honek berehalako ondorioak ekarri zituen, dela erro berrien ezagutzan, dela mailegu berrienean, nahiz gramatika zaharreko zenbait prozesu historikoki ezezagun edo atzendurenean:

a. ondoko azterketek erro monosilabiko berrietara eraman dituzte (**han, *ger,* etab.), azaleratuaz barnean zituzten lehenagoko hainbat bisilabo eta polisilabo (*ahari, ahuntz, akher,* etab.);

b. erro berriez landa, morfema berriak aurkitu zaizkigu —edo zaharrak, baina lehen ezagutzen ez genituen konbinaketa edo sareetan—: *hortz* eta *beltz* ez dira CVC hertsi-hertsian eta komeni da gehiegizko *-tz* horri ezikusiarena ez egitea: hortaz, soilik eratorri edo mailegu izan litezke (cf. *-bel* eta *hor* arkaikoa);

*c.* *pertz* ere ez da CVC, baina honakoan ezin zatika genezake ***per-tz*; beraz, haren hasierako ahoskabea, hitzaren aldaerak, etimologia ezaguna eta beste kontuan hartu gabe ere, *pertz* soilik mailegutzat jo genezake, AEz eta euskara zaharrean -CC ezinezkoa delarik. Erro-Teoriak mailegaketaren azterketan ere aldaketak ekarri ditu: batetik, mailegaketa geruza ezagunenek baino garai zaharragoen egitura eta ezaugarriak aztertzen dituelarik, mailegaketa gehiena edo ezagunena itxuraz baztertzen edo atzentzen badu ere, forma kanonikoaren

garapen sistematikoak mailegu berrien ezagutza dakar, konposatu-eratorrienez landa. Etimologia formalak, erro-ereduak eta horien aldaketak oinarri hartzen dituen hurbilketak lehen eskurazail ziren hatsarre metodologikoak eta emaitzak dakarzkigu euskal alorrean, komeni den zehaztasunaz lantzen denean, bederen. Berreraiketa-bide berri honek etimologiak ere berritu ditu, ez bakarrik lehen ezagutzen edo susmatzen ez genituen maileguak salatuaz, baizik eta lehenagotik genituen susmoak eta bilakabideak zehaztuaz eta finduaz;

d. Gramatika zaharraren zantzuak agertu zaizkigu, dela erreduplikazio, dela aurrizki:

$d_1$) Aurrizkiak: _*sa-, *gi-, *la-_: _sa-bel, sa-hets, sa-mur, gi-bel, gi-zen, gi-har, la-bur, la-bar,_ etab. Azkenokin aspaldiko lanetan (Lakarra 1998a, Gorrotxategi & Lakarra 2001, adib.) izan nuen ez [aurrizki + erro], baizik eta [erro + erro] azaltzeko tentazioa. Ez da horrelakorik, ordea: ezkerretako osagaiek ez dute semantika propiorik, ezin joan litezke bakarrik (ez dute autonomiarik) eta ezin ager litezke erro ezagunen eskubitara ere. Hori guztia gutxi balitz, ez dira erroei eskatu CVC egiturara iristen, eta ezin esan lehen CVC osoak eta beteak zirela eta ondoren eskubiko C galdu egin zutela AEn, horrelako fenomenoak ez hor eta ez akitanieran ez baitira jazotzen, 1.000 bat urte beranduago baizen. Honenbestez, ez erroak baizik eta aurrizkiak genituen;

$d_2$) Erreduplikazioak: _go-gor_, _*da-dar_ (> _adar_), _*da-dats_ (> _adats_), _*de-der_ (> _eder_), _*do-dol_ (> _odol_), _*ze-zen_ (> _zezen),_ etab. Ez dira aurkitzen aditz jokatuan —grekeraz eta IEz hor dira ikusgarriago— baina bai aditz-izenetan: _ahantz_ (< _*na-nan-tz_), _ihintz_ (< _*ni-nin-tz_), _ohostu_ (< _*no-non-tz-_), etab. Horrenbestez, ondoriozta bide genezake ez soilik aurrizkiek gehiago iraun zutela izenetan baizik eta aditz jokatua erlatiboki modernoa eta, zalantzarik gabe jokatugabea baino modernoagoa dela (ik. §4.4.6.1 eta 158. oh. froga gehiagotarako);

e. Aditzean Lafonek erakutsi zuen eredu-aniztasuna (VC _utz,_ CVC _thoR_, VCVC _akhin_, VVS _aus_, etab.) CVC-ra eta horren hedaduretara eraman genezake, barne-berreraiketaz hura baino gehiago arduratuz geroz, bederen—:[109] _utzi_ < _*e-dutz-i,_

109. Cf. «Un nom basque, s'il ne contient aucun préfixe ou suffixe connu et dont la valeur soit nette, ne se laisse généralement pas analyser; ou, plus exactement, on ne possède aucun moyen direct de l'analyser. Mais on peut essayer de recourir à un moyen indirect, qui consiste dans l'emploi de la méthode comparative. Il faut chercher des mots appartenant à la même racine dans des langues apparentées génétiquement à la langue basque, c'est-à-dire dans les langues caucasiques» (Lafon 1950: 508); damurik, egundaino bide horretatik ez da ezer erdietsi eta ez dirudi etorkizunean berri hoberik izan litekeenik.

*jakin* < **e-da-khin, jausi* < **e-da-dus-i*, etab. Honek dakar lehen ezagutu eta uste baino askozaz joko larriagoa zutela aurrizkiek: **e-CVC, *e-da-CVC, *e-ra-CVC, *e-da-ra-CVC*, **e-i-CVC*, **e-i-ra-CVC*, (**ardano* < **e-da-ra-dan-o*, *izan* < **e-i-zan, i-ra-kats-i*, etab.), eta erro jokatuak, aldiz, ez bide ziren ehunka, lehendik ezagutu 60-70en herenak edo are gutxiago baizen: bat bakarra *e-bil-i* eta *e-ra-bil-i*-n, beste bat *e-san* eta *ja-san*-en [< **e-da-san*], hirugarren bat *e-gotz-i*, *e-ra-gotz-i, jauzi* (< **e-da-goz-i*) eta *urgazi*-n [< **e-da-ra-gotz-i*], etab.; ik. § 4.4.6.1.

**4.2.** Forma kanonikoaren ikerketak hizkuntza IEren zein semitikoen egitura eta bilakabidearen historia aztertzeko eman duen etekina ezaguna da. Are gehiago, hain zabaldua izan ez arren, erroaren eta morfemen azterketa sistematikoak laguntza handia eman du familia uralikoan (Bakrò-Nagy 1992), sinitikoan (Sagart 1999) eta austronesioan (Blust 1988), gutxienez.

Ikertzaile gehienen artean saio horiek bezain ezagun izan ez arren, euskalarientzat ez bide du interes gutxiago, japonieraren eta euskararen arteko hurbiltasun tipologiko handiagoa gogoan izanik, aitzin-japoniko-aurrekoaren berreraiketaz Janhunenek egindako saioak (1997).[110] Egileak erakusten duenez, japoniera historikoaren morfema-egitura ikertu nahi den hizkuntza-egoera zahar hartara iristeko biderik garrantzitsuenetarik da eta horren bitartez garatutako barne-birreraiketaz tonu oposiziodun erro monosilabikoen sail handiko lexikoia berreskuratzen dela defendatzen du eta are aitzin-japoniko-aurrekoaren lexikoi osoa noizbait *(C)VC erro monosilabikoz osatua izan zitekeela aldarrikatzen (1997: 14). Janhunenek erakusten duenez, hizkuntzaren historian izan diren erreduplikazio- eta konposizio-fenomeno ugariek egin dute egitura zahar horretatik abiatu arren historian zehar bisilaboak eta polisilaboak nagusi diren egitura ezagunera iristea eta, beraz, «(…) Japanese, very much like Mandarin Chinese on the continent, has evolved from a monosyllabic tonal language of the Sinitic type in the direction of an increasingly polysyllabic and decreasingly tonal language of the Altaic type» (2)». Horrenbestez hizkuntza «morfosilabiko» bat (ik. § 4.5.4) bide zen aitzin-japoniko-aurrekoa, egungo egunean oso bestelako agertu arren.

110. Egilearen ustez: «Although there are many hypotheses concerning the "origins" and genetic affiliations of Japanese/Japanic, it appears that the diachronic information inherent in the Japanese language material itself is still insufficiently understood» (2); ezin uka gure kasuan ere gauzak ez direla funtsean oso ezberdinak.

Zorigaitzez, euskararen kasuan, ikerbide hori luzaroan atzendu izan da.[111] Uhlenbeckek 1942an aldarrikatu[112] —«je recherche non pas des étymologies, mais des types» (567), «Il va de soi que je vise des types et non pas quelque mot ou quelque racine en particulier» (580)—, baina inork geroztik garatu ez duen hitzen egituren (zehatzago, erroen forma kanonikoaren), azterketa diakronikoaren bitartez, ikusi ahal da eredu bisilabikoak CVC baino askozaz modernoagoak direla: mailegu asko bai baina urri etimologia ezezagunekoak —hots, garai zaharrenak ezagutzeko axolazko bakarrak— eta horien artean fonotaktika zaharreko eta lurralde zabaletan lekukotutako are gutxiago. Horrenbestez, VCVC, VCV, VCCVC nahiz gainerako egituretako ordezkariek aukera handiak dituzte mailegu edo eratorri izateko: *alu* (< *aluu(m)*), *esker* (< *uester*), *otso* (< **hor-tz-so*), *ezti* (< **hez-di*), etab.

Bestalde, ez da CVC erro-egitura hizkuntza eransle ezagunenetan aurkitzen duguna: uralikoz, esaterako, CV(C)CV dira %98-99n eta enparatuko %1-2ak partikula gramatikalak, ez salbuespen edo irregularitate, beraz, baizik eta morfema lexikoen egitura bisilabo orokorraren lekuko (cf. Bakrò-Nagy 1992).[113]

Har bedi ondoko taula: [114]

111. Baina gogora ikertzaileek behin baino gehiagotan morfemen jatorria haien fonotaktikaren arabera antzeman izan dutela (cf. §4.6); horrela, esaterako, Mitxelenak 1964ean *dollor* edo *abagada* maileguak zirela baieztatu ahal izan zuen forma hutsaz baliatuaz.

112. Lakarra (2003)-n azaldu zen bezala, ia 50 orrialdetako lanaren bikaintasuna —artean baino erro-sailkapen zehatzagoa aurkezten zuen eta baita horiek aztertzeko mende erdian parekorik izan ez zuen programa ere— B eta gainerako dialektoen arteko erlazio eta bilakabidearekiko 10 lerro heterodoxok estali bide zuten ondoko euskalaritzan. Bidenabar, hizkuntza-ahaidetasunarekiko Uhlenbecken ideiak Boas edo Trubetzkoyrenetarik gertu ziren eta, hurbilago, Trombetti, Schuchardt edo Tovarrenetarik, aski urruti neogramatiko zahar edo gazteenetarik, noski, eta baliteke horrek haren ideien patua hein batean azaltzea.

113. Cf. Bakrò-Nagy (1992: passim); egile berak dioskunez (152), Korhonen edo Radics bezalako uralistek aitzinhizkuntzarentzat CVC egiturako erroak, sintaxi analitikoa eta VXS hurrenkera aldarrikatu zituzten garai zaharrago baterako.

114. *Legenda*: EE = erro-eredua; IZ = izan zitezkeen formak, L = lekukotutako formak, EZ = Etimologia ezezagunekoak, %-1 = x : L; %-2 = x : IZ; H= EZ iragazki fonetikoa eta geografikoa ezarri ondoren; M = Maileguak.

Duela hamar bat urteko datuak dira; egungo analisi etimologikoak eta geroztiko berreraiketa lanen arabera gaurkotzerakoan hainbat aldaketa egin behar dira (ik. §4.6.11). Eredu bisilabo gehinetan, «hondar» gutxiago da (usu 0 absolutura iritsiaz) eta mailegu gehiago, biek batera CVCrekiko urruntasuna eta horien ezinukatuzko izaera berankorra salatzen dutelarik; juxtu alderantziz gertatzen da (cf. Lakarra 2009b eta inprim.-2) CVC ereduan eransten ditugularik azken urteotan erdietsitako edota lehendik ezagutzen genituen erro autonomia gabeak.

| EE | IZ | L | % | EZ | %-1 | %-2 | H | %-1 | %-2 | M | %-1 | %-2 |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| CVC: | 325 | 152 | 46,76 | 70 | 46,05 | 21,53 | 48 | 31,18 | **14,76** | 12 | **07,89** | 03,69 |
| oCV: | 85 | 29 | 34,11 | 07 | 24,13 | 08,23 | 06 | 20,68 | **07,05** | 07 | **24,13** | 08,23 |
| aCVC: | 425 | 110 | 25,88 | 33 | 30,00 | 07,76 | 15 | 13,63 | **03,52** | 16 | **14,54** | 03,76 |
| oCCV: | 215 | 39 | 18,13 | 08 | 20,53 | 03,72 | 06 | 15,37 | **02,79** | 10 | **25,63** | 04,65 |
| aCV: | 85 | 64 | 75,29 | 04 | 06,66 | 04,70 | 02 | 03.12 | **02,35** | 14 | **21,87** | 16,46 |
| uCV: | 85 | 44 | 51,75 | 05 | 11,36 | 05,83 | 02 | 04,54 | **02,35** | 07 | **15,90** | 08,23 |
| aCCV: | 215 | 82 | 38,13 | 12 | 14,64 | 05,58 | 04 | 04,87 | **01,85** | 15 | **18,30** | 06,97 |
| SVTV: | 300 | 75 | 25,00 | 13 | 17,33 | 04,33 | 04 | 05,33 | **01,33** | 28 | **37,33** | 09,33 |
| oCVC: | 425 | 47 | 11,05 | 07 | 14,59 | 01,64 | 05 | 10,63 | **01,17** | 06 | **12,76** | 01,41 |
| TVRV: | 600 | 195 | 32,50 | 25 | 13,07 | 04,33 | 04 | 02,05 | **00,66** | 95 | **48,71** | 15,83 |
| TVSV: | 600 | 95 | 15,85 | 14 | 14,73 | 02,33 | 03 | 03,15 | **00,50** | 47 | **49,47** | 07,83 |
| SVRV: | 200 | 71 | 35,50 | 05 | 07,04 | 02,50 | 01 | 01,40 | **00,50** | 27 | **38,02** | 13,50 |
| hVCV: | 425 | 54 | 12,47 | 18 | 33,33 | 04,23 | 02 | 03,70 | **00,47** | 07 | **12,96** | 01,64 |
| uCVC: | 425 | 54 | 12,70 | 05 | 09,25 | 01,17 | 01 | 01,85 | **00,23** | 05 | **09,25** | 01,17 |
| RVTV: | 300 | 69 | 23,00 | 09 | 13,04 | 03,00 | 01 | 01,44 | **00,03** | 36 | **52,17** | 12,00 |
| mVCV: | 425 | 94 | 22,10 | 12 | 12,76 | 02,82 | 00 | 00,00 | **00,00** | 47 | **50,00** | 11,05 |
| TVTV: | 900 | 190 | 21,11 | 16 | 08,42 | 01,77 | 00 | 00,00 | **00,00** | 80 | **42,10** | 08,88 |
| uCCV: | 215 | 45 | 20,93 | 06 | 13,33 | 02,78 | 00 | 00,00 | **00,00** | 08 | **17,77** | 03,72 |
| RVRV: | 200 | 41 | 20,50 | 02 | 04,87 | 01,00 | 00 | 00,00 | **00,00** | 14 | **34,14** | 07,00 |
| CVmV: | 325 | 49 | 15,07 | 09 | 18,35 | 02,76 | 00 | 00,00 | **00,00** | 22 | **44,88** | 06,77 |
| RVSV: | 200 | 24 | 12,00 | 00 | 00,00 | 00,00 | 00 | 00,00 | **00,00** | 15 | **62,50** | 07,50 |

Begi kolpe huts batek erakusten ahal digu CVC dela askorekin nagusi azken laugarren zutabean, hots, benetan lekukotzen diren eredu horretako hitz soilak (*bits, gor, hil, hotz, lan*…) edozein eredu bisilabikotakoak baino portzentaia arrunt handiagoan direla etimologia ezezaguneko —ez mailegu, aldaera moderno, eratorri-konposatu edo fonosinbolismo—, eta ia guztiek gainditzen dituztela jar dakizkiekeen iragazki fonotaktiko eta geografikoak oro (hauen azalpenerako ik. Lakarra 2003): horrezaz gainera, ezkerreko zutabeei so egiten badiegu, horietan ere ikus genezake monosilaboak izan zitezkeen 325etarik 152 (% 14,76) gauzatzen direla, hainbat disilabo (13/20tik) % 1era ere iristen ez direlarik eta soilik bi igarotzen % 3tik.

Monosilaboek eta bisilaboek dagoeneko duten diferentzia hain larria areagotu (halako bi edo) egiten da aztergai izan ditugun monosilaboei —hots, modernoki modu autonomoan lekukotutakoei— berreraiketaren bitartez eskura ditzakegunak erantsiaz: goiko zifra horietan ez dira *-bel, -bil, -dan, -din, *dur, -gin, -khar, -khus, -san, -thor*…

Mitxelena-erako berreraiketa estandarrak, ezta, jakina, 1995 geroztiko **dar, *dats, *der, *dol, *don, *dul, *ger, *han, *nal, *nin, *non, *zal, *zen, *zon*… ere. Horiek kontuan hartuaz CVC-ren hondarrak 90 edo lirateke 325 litezkeenei buruz —% 14,76tik % 27,6ra[115] igoko lirateke—, eta 190 inguru gauzatuak (hondarrak gauzatuei buruz % 31,18 > % 47,2).

Eskubiko hiru zutabeetan diren maileguekikoei kasu egiten badiegu, guztiz diferenteak dira emaitzak, ia-ia kontrakoak: oso apalak CVC mailegatuen kopuru absolutu nahiz erlatiboak eta askozaz handiagoak bisilaboenak, urruti aurreko zutabeko % 0,00 eta % 1,00 bitarteko haietarik. Haren iruzkinean erantsi bezala, orain ere monosilabo berreraikiak gogotan hartuaz, ez bide genuke horien artean bakar bat ere mailegaturik aurkituko eta, horrenbestez, goiko % 7,89 % 6,3ra edo jaitsiko litzateke. Interesgarria da ohartzea, haatik, **enazur, sorbalda* eta beste konposatuetarik erro bisilabikoren bat ateratzen denean ia beti maileguak direla; egia da *arran-* (cf. *arrain*, *arrano), *narros-* (*inarrosi*) edo *erre* ez direla holakoak baina horietan oraindik berreraiketa ez da muturreraino eraman (< **e-da-ra-don, *e-da-ra-non-tz, *e-ra-den*) eta, aurrera egiten badugu, berriz ere —morfema gramatikal zaharrez gainera— erro monosilabikoak dira ageri: cf. *lo, jo, idoki, eho, joan, eten, edeki, lehen* < **don*, **non*, **den*.

Eredu bisilabiko gehienetan lekukotuen zifra absolutuak hain txikiak dira —nahiz soilik IZ/L % 10etik gora zutenak ekarri hona (hortik behera dira gehienak)— non H edo M zutabeetan ereduak zein toki betetzen duen baino interesgarriago begitantzen zaigun eredu bakoitzean H eta M-ko datuak erkatzea, betiere H-ri lehentasuna emanaz. Ik. bedi § 4.6.1en hurrengo hamarkadako lan etimologikoak taula nola aldarazten duen.

### 4.3. AEZren fonologiarantz

> The reconstruction of Old Chinese is sometimes treated as a pure matter of phonology (…) The central thesis of the present book is that in order to reconstruct Old Chinese phonology, a proper understanding of Old Chinese morphology and word-families is indispensable (Sagart 1999: 1).

---

115. Bistan denez, baldin eta 225i buruz eginaz kalkuluok —hori da fonotaktika urriagoarekin (*m-*, *f-*, *l-* eta *p-* gabeko) CVC batek duen erro potentzialen gehienezko kopurua AEZn—portzentaiak % 40 goratuko liratekeela eta monosilaboetako eta bisilaboen «fosilen» arteko ezberdintasun larria are nabarmenago litzatekeela.

*4.3.1.*[116] Ikusiko dugunez, AEZren fonologiaz aurkez litezkeen aurrerapen gehienak berreraiketarako erabili eredu berriaren ondorio eta inplikazioak dira, hots, erro monosilaboaren teoriari lotuak. Haatik, analisi-berrikuntza horiek miatu baino lehen, Mitxelenaren paradigmaren ageriko edo estaliko ezaugarri batzuk aipatu beharra dugu, horiek dagoeneko berreraiketa-eredua sakonki berrikustera baikaramatzate eta are zenbait alderditan (C-inbentarioan, esaterako) aldaketa zenbait proposatzera, teoria berriarekikoak gorabehera.

Ukitu nahi dugun eta orain arteko ikerketan arreta handirik merezi izan ez duen lehen alderdia Mitxelenak berak gogoratzen digu laburki, ozenez eta txistukariez ari 2. argitalpenean ez ukitu, ez inolako eranskin gabe ezabatutako «antzinako C-sistema», *FHV*-ko 19. kapituluan; hots, AEko C-bortitzak nahiz *ab initio* horrelakoak, nahiz jatorrizko C-taldeetarik sortuak izan zitezkeen, bigarren kasu honetan aldatu eta soildu zirelarik, baina ahuletarik —h.d., etorkiz soilak zirenetarik— bereizten zituzten tasunak gordeaz. Garai hartan Mitxelenak bigarren aukeraren aldeko frogarik (etimologiarik) edo aieru sendorik ez zuelarik, lehendabizikoaren alde egin zuen eta hori dugu estandarra[117] geroztiko fonologia diakronikoan. Alabaina, bortitz guztiak lehenagoko C-talde bezala azaldu ez badira ere oraindik, geroztiko ikerketak lehen baino segurtasun askoz handiagoa damaigu aukera horren alde (ik. §4.3.2).

Bigarren arazoaz ere Mitxelena jakitun zen (ik. *FHV*), dakigularik inoiz askatzen saiatu ez arren: ozenek eta txistukariek aspaldidanik —nahiz ez AEn bertan oraindik!— amaieran fortis-aren aldeko isuria dute, baina historikoki neutralizazioa burutzera iritsi gabe: gogora bitez erronkarieraren *-r* / *-R* oposaketa zenbait (*ur* / *uR*) eta gainerako euskalkietako *papeR*/*papera* eta enparatuko ezagunak; bistakoa da bisilabo eta polisilaboen amaieran -R aldeko joera ia erabatekoa dela, barnekoetan edo monosilaboetan gordeaz lehengo ahulak: *bihaR* : *biharamon* (< **bihar-egun*), *haur* : *gauR* (< *gau-haur*).

Txistukarietan Mitxelenak agerian uzten du amaierako kokaguneko fortizio-erregelaren berankortasuna,[118] arrunt bizirik baitzen latinetiko lehen maileguak sartzean (*gorputz* < lat. *corpus, oputz* < *opus*) eta are geroago. Halaber, *gazi* ~ *gatz, hesi* ~ *sa(i)-hets,*

116. Erka bedi §3.3ko figurarekin. Atal honetako zenbait ideia egileak zuzendutako Alazne Begiristainen Gradu Amaierako Lan batean (2015: inprimategian) ukitzen dira. Bere MALean ere C-taldeez eta forma kanonikoaren monos. à bisilabo aldaketaz ari delarik, atal hauei dagozkien zertzelada eta gogoeta anitz aurkitu ahalko da.

117. Bitxi da Hualdek eta Traskek bortitz/ahul oposaketa zalantzan jartzea herskarietan baina ez R eta Setan; Mitxelenak berak lan-erdia egina utzi ziela dirudi kontsonantismoaren laburpenean.

118. Fortizio horren berankortasuna bat letorke erregela fonologikoek duten kanporatzeko joerarekin; antzekoa aurkitzen dugu, esaterako, homorganikoen kontrako txistukarien asimilazioan: *zotz* baina Etx. *cin-hexi* (hots, soilik erro mailako erregela) eta gero *zotz* – *sinhetsi,* erroa hazterakoan.

*orrazi ~ orratz*, eta gainerako alternantziek erakusten dute amaian frikaria (ahula) zela zaharrena (cf. *hez-i* / ***hetz*) eta afrikatua (bortitza) berrikuntza. Aditzean *naiz* (< *naiza-*) da, baina *balitz*, *litzateke*, *-zan-* etik.

Beraz, Mitxelenak aztertutako hizkuntza-egoeran erro- edo enbor-amaieran ez da burutu txistukari- edo ozen-neutralizaziorik eta hasierako kokagunean bezala hemen ez da C-bortitz zaharragoren aztarnarik eta nekez hitz egin liteke benetako neutralizazio diakronikoaz. C-sail bakarra proposatu behar bagenu, hori ezingo litzateke bortitza izan, ahula baizik (erka § 3.3ko figura):




### *4.3.2. AEZko ozen eta txistukariak*

Erro monosilabikoan oinarritzen den Lakarra (1995) eta ondoko lanetako hurbilketan Martinet eta Mitxelenaren ereduko hiru kokagune (edo gehiagotatik) bi nagusitakora igaro gara, mon-khmerrean eta txineraz bezala, besteak beste (cf. Baxter & Sagart 2014 bigarrenarentzat):[119] CVC-n ez da V-z hasten edo amaitzen den erro lexikorik eta oso mugatuak dira $C_1$ zein $C_2$-n ager litezkeen fonema-sailaren kideak ere. Gainetik, Mitxelenaren sisteman bortitz/ahul sistema ozen eta txistukarientzat hasiera (ahul) eta amaierako (bortitz) kokagunean neutralizatzen delarik, soilik tartekoetan —bokalartekoetan, zehatzago— gordetzen da oposaketa. Gure AEZren berreraiketan tarteko kokagune horiek desagertzen direnez, ez da lekurik Mitxelenaren ereduko bereizkuntzetarako ere (ik. Lakarra 2011b):

n- : -N, l- : -L, (**r-) : -r, s- : -c[120] ś- : -ć

119. Bigarren honetan —sinologia ia osoan bezalatsu—, silaba-buruen eta silaba-amaieren azterketak hartzen du askorekin liburuaren zati nagusia.

120. Ikusi dugunez, Mitxelenaren AEMko sisteman ere txistukarietan s- : -s, ś- : -ś izan behar genuke, berak eskubian afrikatuak eman arren; AEZrako txistukari afrikatuak onarturik ere, fonologikoki frikariekin distribuzio osagarrian liratekeenez, fonema sail bakarra litzateke. Ozenetan ere antzekoa onar genezake.

Beraz, 5 fonema genituzke bakarrik eta ez 10 gero AEBn legez: sudurkari, alboko, dardarkari, txistukari bizkarkari eta txistukari apikari bana.[121]

Ez da soilik «egiturazko egia», fonema gutxiago aski dugula AEZrako —berreraiketak arrastorik utzi ez duen eta, beraz, behar ez den hotsik ez du bere jardunean onartzen—: fortizio prozesu bat suposatzea aski da akabuko bortitzen berri emateko eta barnekoei dagokienez —Mitxelenak (1961ean, nahiz gero) frogarik izan ez arren, irekirik utzi zuen bidetik—, noizbait kontsonante taldeak zirela pentsatzeko bakoitzean datu gehiago dugu:

-L- : *beLe* < **bel-le* (cf. *erle*), *il(h)e* (< **enon-le*).
-N- : *arraNo* < **arran-no, baino* < **ba-din-no, cf. arrain* < **arran-i, bai(n)a* < **ba-din-a*.
-R- *: *aRan* < **e-da-ra-don, arraultza* < **e-da-ra-don-tza* [/*R*/ < *-nr-*].
-TS- : *otso* < **ohtso* < **hohtso* < **hortz-so*.[122]

Antzinako bisilabo zenbaiten (*jaun* / *jauregi*, *egun* / *eguraldi* / *eguberri*, *abere* / *abeltzain*, etab.) amaierako kontsonantean den *-n* / *-r* / *-l* / *-ø* txandaketaz eta horren azterketa monosilabo zaharretako -Cra zabaltzearen interesaz, ik. 236. oh eta § 4.6.4.8-4.6.4.9.

***4.3.3.*** AEZko kontsonante-sailean 5 herskari (3 ahoskabe soil /b/, /d/, /g/ eta bi ahoskabe hasperendun, /th/, /kh/),[123] 2 txistukari (/s'/, /s/), hiru ozen (/l/, /n/, /r) eta laringal bat (/h/). Herskariak $C_1$-en ziren bakarrik eta, gero Martinet eta Mitxelenaren

121. Tipologiak —zenbait tipologok, hobe— esan dezakeena gorabehera, /ś/ gabe pasatzeko —edo /m/ eta /p/ kosta ahala kosta eransteko— Forni (2013) eta ondorengo baten saioak ez dira batere egiantzekoak, beren berreraiketa eta etimologiek ez baitiete behar adina eusten. Izan ere, euskara hizkuntza zeltiko berantiar —edo IEren kide (Blevins)—dela kosta ahala kosta frogatzeko asmatuak dira; ik. § § 2.9.1-2.9.2 eta Gorrotxategi & Lakarra (2013).

122. **hor-so* balitz inoiz pentsatu dugun bezala, ***oso* genuke, ez *otso* [**hor-so* > **hohso* > **ohso* > ***oso*] cf. *h – r* > *h – h* > *ø – h* > *ø – ø* **hertz-bu(n)-on(e)* > *eskuin*en, baina **hertz-bu(n)-ger* > *ezker*, non *r – r* > *ø – r* disimilazioak saihestu duen horrelako bilakabidea (ik. testuan, § 1.1en akabuan). *Z + b* > *zt* dugu **bar-z-be(he)r(a)* (ala **bar-z-der*?) > *bazter*-en (hemen baita *r-* disimilazioa ere) eta **hatz-bar-en* > *aztarren* / *aztarna*-n ere.

123. Komeni da itxura grafikoak ez nahastea, fonologikoki ahoskabeak baitira herskari guztiak: «in 'aspirating' languages such as German and English, the contrast in word-initial position is typically between a series of plain voiceless unaspirated stops and a series of voiceless aspirated stops» (Beckman *et al.* 2013: 260) eta baita «To avoid any possible confusion, in the languages under discussion here, we will refer to orthographic 'b, d, g' as lenis stops and 'p, t, k' as fortis stops without implying any specific phonological or phonetic interpretation or representation» (261); guk nahiago izan dugu hasperenarekin eman bortitzak, are gehiago kontuan izanik C1 (/Th-/) dela herskariek CVC-n bete zezaketen kokagune bakarra.

AEBn bezala, ez zen ahoskabe/ahostun oposaketa fonologikorik.[124] Alabaina, oraindik hortzetako ahula ugari zen AEZn —**dar, *dun, *din, *dan, *den, *dol*, etab.— **d-* [*/t/] > *l-,* ondotik (AEB baino lehen, cf. Mitxelena 1957) gertatutakoaren aurka: cf. **das : lats, laster* : *adats* : *aldats* : *jats-i, arrats*, etab.

AEZtik euskara modernora bitarteko hainbat mende eta milurtekotan ikusten dugun kontsonantismoaren bilakabidea bateragarria da hizkuntza isolatzaileetarik eranslerako bidean aurkitzen dugunarekin, hizkuntza horien azterketa estandarren arabera: esaterako (cf. Prabhakar Rao 1992 eta Krishnamurti 2003), aitzin-dravidikoak 17 kontsonante zituen eta hizkuntza dravidiko modernoek 36 edo, sanskritotik eta hizkuntza indo-arioetarik jaso maileguetakoak kontatuaz; haatik, errazkiago erka bide liteke euskara beste hizkuntza eransle batek (japonierak) aitzin-hizkuntzatik gaur arte pairatu bilakabidearekin (ik. Frellesvig 2010): AEZ 11 > AEM 16 > EM ~21,[125] ia % 100eko gehiketarekin.[126]

Hizkuntza eransleen kontsonantismoaren historian ikusitakoak badu paralelismo gehiago EBZ ondoko herskarienean:

> «(…) nature of agglutinative Word-form is specialization of consonants by their position in Word-form: increase of role of voiceless stops in the initial position of root, increase of utterance of sonorants and nasals in the ending of word-form, possibility of initial vowel in root and etc.» (Zybkova 1977, *apud* Prabhakar Rao 1992: 65);

Ez ahantz aitzin-dravidikoan ez zela ahostun/ahoskabe oposaketa fonologikorik herskarietan, ezta Holmerrek (1970) ahoskabe/ahostun oposaketa herskarietan, atzizkiak, hasierako azentua, etab. aipatzen dituela ere (aitzin)euskarak *ez* zituen hizkuntza eransleen ezaugarrien artean (ik. 124. oh.).

---

124. «We find that the differences are substantial, supporting the claim that aspirating languages are not like true voice languages, in which the feature of contrast is [voice]» (Beckman *et al.* 2013: 259). Hemen esandakoak balio du Trask (1985) eta Hualde (1997)-ren kritikarako (ik. § 3.4).

§ 4.5ean markatu legez, Holmerrentzat (1970) herskarietako bortitz/ahul oposaketa EZ zegokien hizkuntza eransleei (hauena ahostun/ahoskabea zen), isolatzaileei baizik; gainera, herskarietako bortitz/ahularekin batean berak AErako erroaren forma kanoniko 'txikia' (3-5 hots), aurrizkiak eta ez atzizkiak, azentua amaieran eta ez hasieran, etab., proposatzen zituen.

125. Gutxi gorabeherako kalkulu honetan geografikoki nahiz diakronikoki orokor edo oso hedatuak diren *p, t, k* (ez beren hasperendunak) *b, d, g, f, m, h, s, z, ts, tz, l, n, r, R, tx, x, ll, ñ* sartzen ditut, hortik at utziaz [x], [t'], [d'], Z-ko txistukari ahostunak, *r* ubularra eta besteren bat.

126. Gavelek dagoeneko ohartu bezala, historikoki aurkitzen ditugun hitz-hasierako ahoskabeak (soilak nahiz hasperendunak) ez datoz AEtik baizik eta EBZ ondoko asimilazio, onomatopeia eta —batez ere— mailegaketa ugarietatik; arestian zehaztu du gaia Eneko Garcíak GrAL batean.

### *4.3.4. Bokalak*

Hauei dagokienez, ez da Mitxelenak AEMrako onartu —eta Z-ren salbuespenarekin orokor den— inbentarioaz landako bestelakoren aztarnarik (/a/, /e/, /i/, /o/, /u/),[127] nahiz isolatzaile > eransle bilakabidea edo eransletasun-areagotzea izandako hizkuntzetan % 50eko bokal-urritzea edo are larriagoa kausi litekeen (askoz inbentario handiagotik abiaturik). Munda hizkuntzek, esaterako, modernoki 4/5 bokal dute baina aitzin-mundak 14, 7 luze eta 7 labur (cf. Donegan 1993 eta Khrisnamurti 2001). Interesgarria da kontrako deriba pairatu zuten hizkuntza monkhmerretan aitzin-monkhmerrak bokal asko izanik —aitzin-mundak baino gehiago—, hizkuntza modernoek areagotu egin zituztela: hiru bat dozena dituzte Doneganek dioskunez.

Esan dugu gure hizkuntzaren bilakabidean horrelako aldaketaren islarik ez dela aurkitzen eta, beharbada, ez da zer suposatu ere AEZk egungoak (edo akitanierakoak) baino askozaz bokal gehiago zuenik, baldin eta aitzinhizkuntza hura VSO izan balitz (cf. § 3.6): «With respect to their phonological properties, verb-initial languages resemble not SVO but rather SOV languages» (Gil 1986: 215). Are gehiago diosku aurreraxeago, silaba-egiturari eta beste pare bat ezaugarri fonologikori dagokienez:

> The average C / V ratio of verb-initial languages, 4.51, is actually higher than that of SOV languages, 4.09…though this difference is not statistically significant. The C-V ratio of verb-initial languages is, however, much higher tan that of SVO languages, 3.52 —and this difference is statistically significant, at P < 0.025. Similarly, the proportion of tonal verb-initial languages, 0.17, is actually lower than that of SOV languages, 0.23— though this difference is not statistically significant (Gil 1986: 216).

AE klasikorako bost diptongo berreraiki zituen Mitxelenak: *ai, ei, oi* (*ui* aldaerarekin), *au, eu*.[128] *FHV*-n garbi asko azaltzen da bokalarteko herskari ahostun ahulek eta *-n*-ak duten galtzeko isuria, ondotik lehen ezker eta eskubi ziren bokalak, hiatoan une batez

---

127. *o / a* alternantzia zenbait bada (*eramo/eraman, ediro/ediren < *ediran < *eradin), *don, lo, lohi,* etab. / *lan*… baina AE baino askoz berankorragoak bide dira (akitaniera ondokoak), oraindik ongi ulertzen ez ditugun arrazoi morfologikoek sortuak.

128. Ohar bedi euskalki guztietan zirelako hartu zituela AEkotzat; 1981az geroztik ezingo zukeen hori mantendu (ik. hemen § 5), euskalkien bidez soilik EBZ berreraiki bailiteke, ez AE. Bestalde, Mitxelenak behin eta berriro dioskunez, diptongoak aldakorrak eta ahulak dira, eta, beraz, hizkera modernoetakoak ez dira nahi eta nahi ez (gehienetan ez dira) AE ez beste hurbilagoko egoeraren isla ere. *Urten/irten* bikotearen (bada *erten* ere Urola eta aldirietan) oinarrian den **eu*, demagun, **e.o* hiato batetik eta hau *eCo-tik (*egorri*) Mitxelenak erakutsi zuenez… nahiz horietan dialektoen lehen banaketa edota are AEko 6. bokala —Z [y] berbera— berreraikitzeko arrazoi aski ikusi nahi duenik ere izan (Larresoro).

izan eta diptongo berriak osatuaz usu hizkuntzak zilegitzat hartutako konbinaketetan. Egia da enparatuko hainbat diptongo (_au_ gainerakoak baino urriago) ez sortu baizik eta galdu ere egin dela bide ezberdinez, silabaren kodaren arintze-bilakabideen bitartez, demagun. Baina gertakari hauek berankor eta dialektalago dira; funtsean, bokalarteko herskari ahostunen edo _h_-ren (3. silabatik aurrerako) erorketaren ondorio.

Berreraiketa aitzinatu ahala, garai zaharretarako diptongo gutxiagoren aztarna eta beharra dugu, hainbat non (besteak beste) delako erroren batean diptongoa izanik, erro horren mailegu- edo eratorri-konposatu baten kontrakzio «berankor» baten aztarnatzat har dezakegun: cf. _hogei_ < _*ogehi <… *(b)o(r)-gen-i_; _sei_ < _*sehi, hedoi_ < _*e-don-i, alai_ < _alaja, zemai_ < _menaza_, etab.[129] Erro monosilabo historikoetan aurkituak interesgarriak ditugu: _gau, haur_ ('ume', '1. graduko erak.'), _sei, bai, gai, goi(z)_ eta gainerako gehienak edo mailegu edo forma bisilaboen kontrakzioak ditugu, oraindik azaldugabe diren hiruzpalau ditugularik soilik ustezko diptongo «zaharren» azken hondar gisa.[130]

#### _4.3.5. Hitz-hasierako bokalismoaz_

Schuchardtek lehen eta Vennemannek (1994) eta Traskek (1997) gero, aldarrikatu zuten euskara modernoak V-z hasitako hitz ugari duela. Komeni da usteketa eta baieztapenen zergatiaz ideiaren bat izatea, batez ere lehen bien kasuan: batari ederki zetorkion V- ugari izatea garai batez defendatu zuen euskara-hamitikoaren teoria sustengatzeko; besteari ere ez gaizki _Vasconic_ handinahia _à la indo-européenne_ (laringala- > ø eta C- > ø askoren bitartez) azaltzeko. Egia esan, ez euskara-hamitikoak, ez _Vasconic_ horiek ez dute egun jarraitzaile ugari (ofiziokoen artean, jakina), eta alde horretatik lasai izan gintezkeen V- eta C- kontaketetan aritu gabe.

Alabaina, Lakarra (1996)-n eta (2013e)-n kontaketa horri ekin nion, Azkueren eta Sarasolaren hiztegiak erabili eta V-z eta C-z hasi orrialdeak zenbatuaz. Lehenik eta behin,

---

129. Markagarria da aditz zaharretako erroetako diptongo lagina: _eutsi, jautsi, eutzi, jaio, irauli_, etab.; ik. § 4.4.6.1 (C)V- aurrizkia + (C)VC erroaren bilakabideaz (uzkurdurak, batez ere). Bidenabar, _sei_ eta _hogei_-ren diptongoak orokorrak izatea (_hogoi_ asimilazio berankorraz landa) pentsaezina litzateke zaharrak balira, CVC erroaren aurka joateaz gainera, _-i_ ezagunegi horiekin.

130. Tani hizkuntzez ari, Postek (2009) eremu linguistiko hartako hizkuntza isolatzaileak «diptongo aberatsekotzat» aurkezten ditu, eta, gainerako ezaugarri larri askotan AEZ haien antzera berreraiki behar bada ere, ez dirudi modurik denik; beharbada, badu zerikusirik testuan goraxeago aipatu Gilen bereizkuntzak (SOV-VSO / SVO), Postek aztertu hizkuntza horiek SVO baitira ez VSO AEZ izan zitekeen legez.

§ 4.4.4n erakusten da Hengeveld-en, Rijkhoff-en eta Siewierska-ren 2004ko lanean sintaktikoki ere VOS/VSO zenbait alderditan SVOtik urruntzen dela, demagun I-ADJ hurrenkera zurrunean SVOren aniztasunaren aldean.

bokal-zaleen kontuak zuzentze-aldera, *h-* gorde duten euskalkietako *hV-* kendu nizkien haien «bokalez hasitakoei», ez baitzen arrazoirik horiek hor izateko /h/ etimologikotzat izanik (ik. §3.5). Are gehiago: aditz zaharretako **e-* aurrizkiak *e-/i-/j-* eman duelarik, asko da *e-, i-* letretako zerrendetan kendu beharra ere (*j-* letra erabat), ugari baitira hor gorde diren aditz zaharrak. Orain *edo* (eta eratorriak) bezalako hitz gramatikal zenbait ere ezabatu behar ditugu (ik. Lakarra prest-2) eta *ala, eta, ezin* eta enparatuak morfologikoki konplexuak bide dira orobat; azkenik, *unain*, *urgatzi*, *arrain* eta beste hainbatetan ere badira aurrizkiak —usu bana baino gehiago— eta ezin esan V-z hasitako erroak zirenik.

Kenketa hauek eginik arrunt apaldurik (%30etik behera) genuke V-z hasitakoen multzoa. Ez da aski, ordea, AEn benetan izan genitzakeenak zenbat ziren susmatzeko edota, hobe, AEtik datozenen artean V-dunak ugari ziren erabakitzeko. Hots, ez ote mailegurik euskara historikoan V-z hasten direnen artean? Zer esan *ollo, arima, eskola, eme, ezain, eskatu, esker, okela, alu* eta beste askori buruz? Dakidala, ez da egin V-z hasitako maileguen zerrenda, baina, egin baledi, ez da zer pentsa laburra litzatekeenik.[131] Alderantziz, T ahoskabez hasietan *kalte* eta *koipe* gutxienez ez dira mailegu, ezta *fan* eta *pekorotz*-en lehen zatia, bederen. Batzuk eta besteak finkatu bitartean ez da kontuak zehazterik, baina %10etik gertuago bide dira %20tik baino V-z hasitako ondare zaharrekoak eta, beharbada (cf. §§4.1-2), noizbait %0,00tik hurbil ziren V- erroak (cf. Lakarra 1996a); egungo egunean, hipotesi hura ondorio segurutzat eman liteke Odriozolaren (2016) lanari eskerrak.[132]

Kontuak uste baino zailago (eta Schuchardtek eta Vennemannek nahi zutenetik urrutiago) zirela ohartzeko eta euskara historikoaren eta AEren egoeraren arteko alde gaitzaz jabetzeko, bada argitu beharreko beste puntu bat ere: C-z hasiak urri eta V-z hasiak ugari direla esateko, zenbat V eta zenbat C dugu gogoan AEko inbentariorako? Bokalen kopuruak erantzun erraxa du, itxuraz (ik. §4.3.4), baina eta kontsonanteenak? Euskara modernoan hamairu, sei herskari, bi sudurkari, alboko bat, bi txistukari, /f/ eta /h/ beharko genituzke euskalki gehienetan kontatu, sabaikariak beren berezitasun ezagunengatik kanpoan utziaz. Alabaina, euskara zaharrerako —AE klasikorako, demagun— ez dugu lau leherkari baizik kokagune horretan (***p-* eta **d- > l-*, adizkietarik kanpo), eta ez da ozenik /n/-z landa (eta hori urri, cf. *FHV*), ezta /m/-rik, ez /f/-rik. Soilik /h/ eta bi txistukari behar ditugu gehitu. Zortzi C- eta bost V-rekin gauzak agian beste

131. 2/3etik gora Odriozolaren (2016) arabera *e*-erroentzat.

132. Aitor Odriozolaren GrAL bikainean (2016) oso emaitza interesgarriak dira *e-* letrako hitzen jatorriaz; *i*-koentzat ik. cf. Otxandorena (2015). Batean zein bestean, «V- morfologikoak» (aditz zaharretako aurrizkia daramatenak) kendu ondoren, maileguak dira askorekin nagusi, 2/3 edo, *e-* protetikoa daramatenak berezi eta gero ere.

modu batez ikus litezke; nolanahi ere, altxor zaharrean V-z hasitako erroen ugaritasuna ez da hor zehar alferkeriaz errepikatu ohi den adinakoa ondare zaharreko lexikoan eta, batez ere, hutsaren hurrengoa bide zen AEn.

AE ondoko garaietan, dela koroarien disimilazioen bitartez, dela aurrizkietako edo erro sekundarioetako C- baten erorketaz, dela (berandu, Erdi Arotik aurrera) Grassmannen legeaz **h-…-h-… > ø…-h-…* bilakatuaz, nahiz *e-/i-* aurrizkiak edo **e-(da)-(ra)-* aurrizki multzoa gehitzean, AEko hitzen eta morfemen forma kanonikoa aldatuaz joan da (ik. § 4.3.8 eta § 4.4.3.2) eta hainbat hizkuntzalarik ikusi legez, V-z hasitakoen kopurua ugalduaz (ik. Lakarra 1996a, 2009b, 2013a). Hasiera bokalikoen gehiketa hau, bidenabar, prozesu orokorrago bati lotzen zaio 2006a-n markatu legez, beste hizkuntza batzuetan, dravidikoetan, adib.: oraindik behar bezala azaldu gabe bada ere (euskararen kasuan bederen) eransletasunaren areagotzearekin lotua doa bai hori eta baita ozenen edo herskari ahoskabeen ugalketa ere (azken hau berandu, EBZ ere ondoren) kokagune berean; ik. § 4.3.3 akabuko aipua.

***4.3.6.*** Martinetek AEMrako berreraiki zituen herskari bortitz hasperendunen alde Mitxelenak bildutako frogak ez dira sendoegiak (cf. *FHV* § 12.13-19): akit. *Talsco* / *Halsco*, *Sutugio* / *Suhugio* —nahiz hau ez den hertsiki hasieran—, Nafarroa Garaiko ekialdeko hizkeretako erakusleetako belarrak —horiezaz, ik. 82. eta 90. oh.— eta beste zenbait bilakabide arazotsu, mailegu gutxi batzuetan. Haatik, nago AEZn zein AEMn herskari hasperendunak zirela eta —data zehatzik gabe baina EBZa baino lehen, seguru eta, beharbada, Era aldaketa baino lehen— hasperen huts bilakatu zirela argudia litekeela etimologian aitzinatuaz, hizkuntzalaritza historikoan ohi bezala (cf. Watkins 1991):

1. Historikoki erro hasieran herskari ahoskabea duten aditz zaharretan, herskari hori beti da hasperendun (*e-thorr-i, e-kharr-i, e-khus-i, i-khas-i*), ez ahoskabe soil edo hatxe: ez ***etorri, **ekarri, **ekusi, **ikasi*, eta ezta ***ehorri, **eharri, **ehusi, **ihasi*. Pentsa genezake **e-* nahiz **i-* gehitzean geroztik gertatutako **Th- > h-* ekidin zela, garai modernoetara arte gordeaz hots zaharrak. Hemendik ateratzen da latinarekiko kontaktua hasi aurretik eta are **Th- > h-* baino lehen ere (Era aldaketa aitzin), dagoeneko **e-* gehituaz osatu aditz-saila agortua zela. Orobat, ez da ***e-kantatu* edo ***e-amatu* bezalakorik eta, jakina, *entzun* eta *ezagutu* ez dira erromanikoak Schuchardtek dioena dioela (ik. § 4.4.6.1). Beraz, AEMk bortitz/ahul oposaketa zuelarik herskarietan eta oposaketa hori (bortizki hasperendutako ahoskabeak ~ goxoak) gauzatzen zelarik, hemen garai horren *antequem* bat dugu —testuan aipatu **d- > l-* dugu AEZri dagokiona bigarren urrats gisa, baiezta liteke gutxi edo asko AEM akitaniera baino zaharragoa (eta

bere lekukotasuna arkaikoagoa) zela, inoiz Mitxelenak bi hizkuntz egoerok baliokidetzat hartu arren.[133]

2. «Orainaldiko», hots, aspektu burutugabeko adizkietan (cf. §4.4.6.3, etab.), Mitxelenak **d-* > *l-* bilakabidearen salbuespentzat aurkeztu arren, testuan aipatu aurrizki-eransketaren antzekoren bat gertatu bide zen; Lakarra 2006b-n azaldu bezala, ez genuke itxura txarreko salbuespen horien beharrik gogoan harturik Gómezek (1994) eta Gómez & Sainzek (1995) aldarrikatu bezala AE «V1» hizkuntza izanik, horrenbestez inperatiboaz kanpoko adizkiek debekatua baitzuketen lehen kokagune absolutua, *ba-, ez-*, izenordainak eta bestelako partikularen baten ondotik izan ezik. Ik. B Ark. eta B. Zah.eko adibideak goraxeago aipatu nire lanean.
3. Gordetakoa izan liteke, ez berrikuntza, beste zenbait aurrizkiren ondotik gertatua (*mu-kher*) eta baita konposatu batzuetako 2. osagaietan aurkitzen duguna: cf. *akher, okher*; orobat, *khokots* bezalako erreduplikazioren batean, 2 > 1 hasperenketa metatesiarekin.
4. Bi *Th- (*th- kh-*), 5 V (*a, e, i, o, u*) eta 5 -C (*l, n, r, s, z*) konbinatuaz, 50 *ThVC eta (dela *ThVC > hVCtik, dela *hVCtik) 25 hVC sor zitezkeen. Egiatan familia ezberdinetako 20 bat hVC lekukotzen dira eta, horien artean, erdiak baino gehiago dira hVC : -T(h)VC bikoteak. Azken hauek —arazo formal edo semantikorik gabeak ez badira ere, bistan denez— lehen inoiz izan den baino herskari bortitz hasperendunen eta **Th-* > *h* bilakabidearen lekukotasun sendoagoa ematen dute:

1. **khar*: *ekharri, har(tu), harri?*;
2. *khas*: *ikhasi, hasi, hats*;
3. **khaz*: *i(n)khatz, hatz, hazi*;
4. **kher*: *okher, akher, her-* (akit. AHERBELSTE ?);
8. **khits*: *likhits, hits*;
9. **khots*: *(k)okots, hots*;
10. **khotz*: *-khotx/-khoitz, hotz, bi-hotz*;
11. **khur: zakhur-makhur, hur*;
12. **khus*: *ikhusi, huts*;

133. B. Ariztimuñok gogoratzen didan bezala, argudioa gehiago zabal liteke, AEren inbentariotik /*h/ ezabatzera iritsiaz; izan ere, markatu denez, ez da *hVC batetik datorren *ehVCrik. Baliteke ondorio oso logikoa eta zuzena izatea, baina egungo egunean ez gara gai horrek berarekin lekartzakeenak (fonologikoak, beharbada morfologikoak eta, zalantzarik gabe, etimologiko ugari) azaltzeko, eta, Mitxelenak eta Janhunenek bezala berreraiketaren oinarrizko legeari eutsiz, bestela ezin azal litezkeen hatxeentzat **h* beharrezko dugu: cf. «(..) it is obvious that synchronic laryngeals can often be diachronically derived from non-laryngeal segments, or even from non-segmental features. In many reconstructed protolanguages there is, however, ultimately a laryngeal segment, or several laryngeal segments, that cannot be derived from other sources. Such laryngeals may be termed "primary"» (Janhunen 2007: 209).

| | |
|---|---|
| 5. **khetz*: *akhetz, hezi, maketz*; | 13. **thar*: *har, -(t)ar*; |
| 6. **khil*: *kikil, hil*; | 14. **thor*: *hor, -(k)or;* |
| 7. **khin*: *jakin-ekhin, zikhin, hi, hi-de*; | 15. **thur*: *ithurri, hur*; |

Nahiz eta bat eta bi baino gehiago baztergarri gertatu —zail iruditzen zait guztiekin gertatzea—, kopurua hain da larria non Martinetek eta Mitxelenak proposatu **Th- > h-* bilakabidea lehen baino oinarri sendoagoen gainean ezarritzat jo bide genezakeen[134]. Halere, oraindik ez ditugu ondare zaharreko hitz-hasierako hasperen horiek guztiak (**han, hitz, hun*, esaterako)[135] —edo **-n- > h* nahiz **-r > -h* bilakabideetarik ez datozenak— segurtasunez azaldu ahal eta, beraz, ezinbestekoa da /*h/ AEZren inbentarioan onartzea, Mitxelenaren lanei esker joan den mendeko 50 eta 60etarik AEMrenean den bezala.

5. «Trasken legeak» ere —DV/TV/V alomorfoak direnean atzizki batean (adib. *-de / -te / -e*) DV da alomorforik zaharrena (ik. § 4.4.3.2)— bortitz/ahul oposaketa laguntzen du, eta zeharka baita *ThVC > hVC bilakabidea ere: CV delarik CVCren gramatikalizazio primarioa eta DVC > DV, horren ondoren TV/V sortuaz: **din > -di > -di / -ti, *den > -de > -de / -te / -e*).
6. Historikoki *p-, t-, k-* duten hitzetakoa ere ez AEtik baizik eta bestelakoetarik (mailegu modernoetarik, fonosinbolismoetarik, V- > ø erorketetarik, barneko ahoskabearen asimilazioetarik, etab.) sortua dugu, Gavelez geroz dakigunez (cf. § 3.2) eta, hortaz, *ThV (< *ThVC) ez zegokien herskaria gordetzea eta beste nonbait bilatu beharko genituzke AEko herskari bortitzen oinordekoak.

Horregatik, gramatikalizazio primarioaren CVC > CV bilakabidean oinarrituaz (*ThVC > hV eskuartean dugun sailarentzat), aurrizki, atzizki edo postposizioetan bilatzea proposatzen dugu (denentzat balio du bilakabide horrek) *hV horren ondorengoak. HV- aurrizkirik ezagutzen ez dugularik 2.p.s.eko komunztaduraz landa, atzizki eta postposizioetara hurbiltzen gara, nahiz hor ere ez dirudien lan erraza: izan ere, ezinezko dirudi horrelako ezer lortzea, /h/ postonikoak erori egiten baitira eta erroan pausatu ohi dira unibertsalki azentu larrienak; eta horregatik, ezagun den bezala, ez da horrelakorik ezagun atzizki eta postposizioetan: **etse ha > etse a > etsea*, *ahur > aurre*, etab.

---

134. **khar > harri, hartz, arre* familiaz ik. gehiago § 4.6.4 eta § 4.6.8.
135. Baldin eta azken biek gask. *hisse* 'cri pour exciter deux chiens qui se battent' (Palay) —halaber *hissà* 'percer, piquer avec un dard, un aiguillon; au fig. *dire des paroles venimeuses, mordantes*'— eta *houn(t)*rekin ('fontaine, eau jaillissante, source', ibid) duten antzekotasuna lillura hutsa bada, noski; *hitz*i dagokionez gogora bedi *elhe* eta *oihu* ere jatorri horretakoak direla (ik. Lakarra 2015a).

Alabaina, 2. osagaiko edo atzizkiko *h*-ak bokalartean erori ziren arren txistukarien ondotik fortizioa izan zuten —cf. *barazkari* < *baratze* + *-hari, Amezketa* < *Amezheta*, etab.), eta, beraz, bai *hazkor, hazkar (< *haz-hor)* eta baita *lotsor*-ek (**lotsa-hor* > *lotsaor* > __) ere **hor*-era garamatzate. Hona heldurik, **hor* goragoko *thor*-en kognadotzako guztiz egokia dugu formalki eta semantikoki ere '*etorri-INPERF' > 'ADJgile' (honetan ere ASP gordeaz) gertatu da, honen ezin hurbilagoko **e-din* (> *jin* '*etorri-PERF'): *-di / -ti* '(ADJ.'-PERF) duelarik kidetzat.

7. Deiktiko mota ezberdinen jatorri etimologikoa ez da izaten usuenik edozein hizkuntzatan ere arazo erraza. Are gehiago, bada horrelakorik ezin lor litekeela dioenik ere edota fonosinbolismoaren alor aztergaitzera bidaltzen dituenik. Aurrekoa agerian jarririk ere, uste dugu zerbait antzina genezakeela euskal deiktiko batzuen jatorriaren azterketan, azken batean horiek ere hizkuntzaren gramatikaren eta baita gramatikalizazio bilakabideen parte dira; bestalde, etimologia berriok **Th-* > *h-* bilakabidea sendotzen dute:

   7a. Frajzyngierrek dioskunez txadikoz «[I]t has been shown that clause final deictic and anaphoric locative markers are ultimately derived from verbs 'to go' and 'to come' (…) A similar origin of clause final particles in languages of the central branch could then explain the phonological similarity of the markers» (2002: 161). Beraz, ikusten dugu (6)-n egin dugun (**thor* > *hor*) eratorpenak 2. multzoan kide garbiak dituela.

   7b. **khin* soziatibo-aditzeko errotik abiatuaz, herskari bortitzetarik hasperenera daraman bilakabideak **hin*-era garamatza; emaitza horri gramatikalizazio primarioetako -C > ø ezarriaz (ik. § 4.4.3.2) (edo alderantziz) 2. pertsonako *hi* 'erakuslea genuke;

   7c. Lehenik ere (Lakarra 2013b) 3. graduko erakuslearen jatorria *har* zela proposatu genuen, C. Lord-ek Gineako Golkoko hainbat hizkuntzatan bezala (1993); guretzat gai horren garrantzia ez da orain handia, baina **har* «Martinet Legearen» barnean kokatuaz, **khar* (*ekharri*) lortuko genuke.

#### *4.3.7. Azentua eta erroa*

Dakigunez, Martinetek eta Mitxelenak azentuarentzat kokagune ezberdina aurreikusi zuten —ezkerretik 1. eta 2. silaban, hurrenez hurren—, batak eta besteak helburu ezberdinak bilatuaz, kokagune ezberdinetako herskarien bilakabide bereziak azal zitzakeen azentu demarkatiboa eta hasperenaren distribuzioa, hain zuzen ere. Bi helburuak direlarik

garrantzitsu eta emankor euskarazko morfemen bilakabidea aztertzeko, interesgarri izan liteke bi teoriok uztartzea, bateragarri balira eta horretarako biderik balitz.

Hertsi-hertsian hartuaz, Martineten teoriak ezingo luke hainbat datu garrantzitsu azal: bada hasperen ugari bigarren silaban (eta izan da hortik atzera ere inoiz), ez soilik lehendabizikoan, baina —hasperena azentuaren eskubitara ezinezko delarik— ezingo litzateke lehendabizikoan baino izan azentua (hark nahi bezala) ezker muturrean balitz. Mitxelenari aski zaio azentua bigarrenean edo eskubirago izatea, hasperena ez soilik lehenengoan, baizik eta (bisilaboetan) bigarrenean eta polisilaboetan (inoiz) are eskubirago izan zedin (ik. § 3.5).[136]

Erro Monosilabikoaren ereduan bada Martinet eta Mitxelenaren bi proposamen horiek bateratzerik, azentua akabuan zela proposatuaz, hots, esaldiaren akabuan ezarriaz azentu nagusia eta baita unitate prosodiko bisilaboetan ere, ez erro bisilabikoetan [$AURRIZKI_{monos}$ + $ERRO_{monos}$] egituraren 2. zatian baizik. Jokabide honek, jakina (cf. Lakarra 1996a), morfemen edo unitate prosodikoen tamainari edo forma kanonikoari kasu egitea eskatzen du, Martinetek eta Mitxelenak egin ez bezala.

Hitzen bigarren silaban —eratorri edo konposatuetako azkena zen erro monosilabikoan, alegia— izanik azentua, ez Mitxelenak, ez bestek lehenago aurreikus ezin zitzakeen ondorioak ateratzen ditugu, Martinetek eta hark bilatutako hitzen azentu demarkatiboa eta hasperenaren distribuzioaz landa. Hau da, edozein tipologia holistikotan (cf. Holmer 1970, Houis 1970, Donegan & Stampe 1983, ik. § 4.5), bisilaboen hondar azentuak (eta esaldiaren hondarrekoak) berarekin dakartza aurrizkiak, VO ordena, etab.; kontrakoak, hitzaren lehendabizikoak eta esaldi hasierakoak, atzizki ugaritasuna, OV ordena eta beste zenbait ezaugarri larri. Zalantza egin liteke Martinetek, ez Mitxelenak ikertzen zuten AEMrako bederen horrelakorik onartuko ote zuten; aldiz, argi da erro monosilaboaren gaineko azken silabako azentua (ez aitzineko aurrizkian) eta

136. Ez da ahaztekoa *FHV*-ren bigarren argitalpenean Mitxelenak hitz-hasierako /hh/-en «irregularitateez» (*hire / eure, hauzi / auzi*, etab.) gehitutakoa: «El texto [h.d., 1961eko edizioak, alegia] parece dar a entender, erróneamente, que el número de los casos de discrepancia respecto a la aspiración es más bien pequeño» (*FHV* 1977: 525), berehalakoan «añado, sin ánimo de ser exhaustivo, algunos otros razonablemente seguros en que *son siempre las formas complejas, más largas, las que carecen de* h» erantsiaz, *han ~ anartean* edo **har ~ are* adibide argigarriekin.

Cf., orobat, «Hay que añadir que, dado lo confuso de la situación moderna, es difícil precisar qué consonantes desaparecidas en posición inicial dejaron como resto una aspiración ni en qué condiciones pudo después perderse ésta. Cabría admitir, para citar una sola posibilidad, que en palabras complejas, al encontrarse la inicial a mayor distancia del acento que en la simple de que procedía su primer elemento, haya desaparecido la aspiración que en éste se conservó: sul. *ardai* 'yesca', sin duda oxítono, cf. guip. *ardagai*, lab. *hardo* (vid. infra, 12.16)» (219-220).

esaldi-akabuko azentua direla egokienak proposatzen ari garen AEZren egiturarentzat baina ez, halabeharrez, ondoko garaietarako.

#### *4.3.8. Aldaketak Erroaren Forma Kanonikoan*

Deriba orokorraren barnean (ik. § 4.5) euskara modernoko erro bisilabikoen nagusitasun larrira iristeko hainbat bilakabide fonologiko eta morfologiko gauzatu behar izan dira, monosilaboen mugak ezabatzera edo aldatzera zuzenduaz eta eremu zabalagoak besarkatuaz (Lakarra 2009b):

1. bokal-metatesiak *(*ha(t)s-la(b)ur* > **hasnaur* > *hausnar*) edo
2. konsonante-metatesiak (**e-da-zun* > **ezadun* > *eza.un* > *ezagun*);
3. disimilazioak (**buru-bar* > *burar* > *bular*);
4. asimilazioak (*zin-hets-i* > *sinhetsi*) —batez ere erroetako txistukari eta dardarkari homorganikoak ekiditeko—;
5. polisilaboen higadurak (*jabe* < **e-da-dun-e*);
6. *-g-* hiato-hausleen tartekatzeak (*hogen* < **ho.en* < lat. *offende(re), eza.un* > *ezagun*);
7. neutralizazioak eta erorketak konposizioko edo eratorpeneko lehen osagaiaren akabuan (*larre* + *mendi* > *Larramendi* (toponimoa)*, buru* + *hezur* > *burhezur*).

Horrezaz gainera,

8. fosildu ziren izenetako aurrizkiak (*sabel* < **sa-* 'barne' + *-bel*);
9. orobat adizkietakoak (**e-da-ra-dan-* 'PREP.' + 'APLIK-DIREK.' + 'KAUSAT.' + ERROA + *-o* 'COMPLETIVE' > **ardano* > *ardo*);[137]
10. erreduplikazioak ere antzutu ziren (**zen* > *zezen, *zo(n)* > *zozo* baina ***bebehi* ← *behi* edo ***babalea* ← lat. *ballena*) eta
11. badira proba materialak (§ 8.2) —ez soilik formazko aieruak—aldarrikatzeko aurrizki > atzizki aldaketak gertatu zirela: *gi-bel* → *txerriki* [< *-gi*]), *za-bal* > *zabalza*, etab.;
12. talde > bortitz aldaketa dugu (9ko) /R/-az landa /L/, /N/ eta /S'/-rekin ere eta, neurri batean, morfologia → fonologia aldaketa, bi morfema ezberdinetako azken eta lehen hotsak zirenak talde egin, asimilatu (cf. (4)) eta bakarra

---

137. Gertakari honek azal lezake itxuraz kokagune berean eta mugimendu aukera berdinekin sortutako hirugarren silabako /h/ batzuk hitz hasierara igarotzea eta beste batzuk ez: *herio, harea, hodei, heuragi…* baina ***hard(a)o, **harrain*, etab.; zehatzago begiratzen baditugu gauzak, bigarren taldekoetan **-n-* ez da hirugarren silabaren buruan, laugarrenarenean baizik, *jaio* (< **e-da-din-o*) edo *jario* (**e-da-lin-o*)-ren antzera.

bihurtzean; ondorioz, forma kanonikoaren aldaketa dugu: [erro + atzizki] > [erro polisilabo];

13. asimilaziora eta bortitzera iritsi ez diren kasuetan ere hizkiaren edo erroaren nahiz bien egitura fonetikoa ilundu eta bataren eta bestearen arteko hasierako etena beratzen edo ezabatzen ahal da: cf. *erle,* adibidez.

Aldaketak era askotakoak izateaz landa, oso denbora-tarte luzearen barnean gertatu ziren, deriba batean ohi bezala (cf. Donegan & Stampe 1983, etab.): *-o, -e* > *-a* nahiz *-i* / *-u* > ø 2. silabatik aurrera, etab. akitaniera ondokotzat jo ohi dira, baina beste batzuk (*sa-bel* > *sabel, ze-zen* > *zezen*, etab.) zenbait mende lehenago, agian milurtekoren bat ere, jazo ziren; beste muturrean, deribarekin argiro lotua den erro monosilabo → bisilabo bilakabideak berarekin dakarren txistukari homorganikoen aurkako hatsarra ez zen erabat burutua Etxepareren hizkeran (*zinhetsi*).

Aldaketa morfologikoek zaharrago dirudite (AEMkoak eta AEZkoak) baina fonologikoek berankorrago, akitaniera-ondokoak eta are EBZ-z geroztikoak, inoiz: erreduplikazioaren fosilizazioa **d-* > *l-* aitzinekoa da, eta hori AEM baino lehenagokoa; ez da aurrizkiren aztarnarik latinetiko maileguetan (bai ondare zaharreko lVC-etan [< *dVC]): *sarats* < **sa-latz, samur* < **sa-bur*, baina ***sa-torre, **sa-eliza*, etab.; cf. Lakarra (2015b). Hau guztia ongi lotzen da eredu bisilabikoen berankortasunarekin (§ 4.2) eta CVC askoren AEZ-z geroztiko iraupenarekin. [138]

Aitzineuskarako erroak pairatu eta monosilabo hertsia izatetik gehienbat bisilabikoa izatera eraman zuten hainbat aldaketa laburtu ditugu, horretarako antzeko beste zenbait hizkuntza eta hizkuntza-familiatako paralelismoetan —dela txinerarenean, dela austroasiatikoarenean, dela taniarenean— oinarrituaz (ik. § 4.5). Orokorragoak eta ohikoagoak diren hizkien eta konposatuen fosilizazioaz landa, mailegaketa ugarien bitartezko erro-eredu berrien bertakotzeaz (TVTV, adib.) eta —beharbada— azentuaren tokialdaketaz gainera, erakutsi uste ditugu espezifikoagoak iruditzen zaizkigun beste batzuk, hala nola, zenbait konsonante-metatesi, hasperenaren ezkerreratze, sudurkari eta dardarkarien eskubiratze, bokal-asimilazio, konsonante homorganikoen aurkako murriztapen…; horiek guztiek laguntzen dute lehengo monosilaboen arteko mugak ahultzen eta estaltzen, eta bisilaboen kanpotiko muga berriak sendotzen, erro hedatu-berrituarentzako barneko batasuna erdietsiaz. Hiatoen aurkako /g/-ren txertaketa ugaria

138. Bidebatez, akitaniar idazkietan hitz bisilabo eta polisilabo ugari izateak ez du, berez, erro-bisilabismo orokortua frogatzen; izan ere, bisilabismoa erro-eredu orokortu bezala soilik geroago genuke, hitz-eraketan inputak —ez soilik outputak— diratekeenean bisilabiko; ik. Feng (1997) antzeko arazoez txineraren historian.

ere forma kanoniko berriaren aldeko «konspirazioaren» barneko bilakabide gisa har liteke; izan ere, horiek gabe diptongoak eta monosilaboak ugalduko ziratekeen.

Erro monosilabikoaren teoriaren ondorioen eta morfemen eredu kanonikoaren aldaketaren inplikazioen artean euskararen berreraiketa diakronikoarentzat garrantzizko izan litezkeen zenbait aipa ditzakegu:

1. modu egokiagoan uler litezke itxuraz lokabeak diren hainbat aldaketa fonologiko (segmentuekikoak nahiz prosodikoak) eta morfologiko, zeinen bidez erroaren forma monosilabiko kanonikoa bisilabiko bilakatzen den. Idealki, ikerketa-bide honek noizbait hizkuntzaren historiaren eta historiaurrearen kronologia eta periodizazio egokiagoa ezartzera eraman gaitzake;
2. berreraiki genezakeen euskararik zaharreneko aditz-enborraren egitura eta etorkia zehazten laguntzen gaituzte, Lafonen ustezko polimorfismo erabatekoa mugatu eta CVC erro-eredura eramanaz; higadura eta erorketez at, CVC horrek aurretik —aditz zaharretako **e-* orokorraz landa—, *i-*, *ra-* eta **da-* aurrizkiak eta are hauen konbinaketak (**e-i-ra, *e-da-ra*) —aldakakorra azken hau (*jar-, ar-, inar-, ihar-, ur-*)— har zitzakeen aspaldi agortu baino lehen. Bilakabide hau betea zen adizki jokatuak sortu aurretik (ik. § § 4.4.6.1-3);
3. hainbat etimologia berri lortu ditugu forma kanonikoaren azterketari eskerrak, zenbait dozena aditz- eta izen-eratorri aspaldi fosilduak tarteko eta baita lehenago kausitu gabeko edo gaizki azaldutako mailegu latindar zahar batzuk ere;
4. maileguek —ia 2/3 dira erro-eredu bisilabiko lekukotuenen artean— erabateko garrantzia izan dute bisilabismoaren ugalketan, konposatu eta eratorri usuenik garden eta berankorrena baino askozaz larriagoa. Gertakari hau ez dagokie soilik lehen aurrizki eta erreduplikazioak nagusi zirelarik (CV-CVC, (C)V-CVC), ezinezko ziren -V ereduei, guztiei baizik;
5. aurreko datu eta argudioek bisilabismoa euskal erro-ereduetako forma kanonikotzat finkatzea eta nagusitzea fenomeno berantiartzat hartu beharra dugu (lehen Erdi Arorako edo Antzinate Berankorrerako gehienez ere).[139]

---

139. Gogora bedi § 4.2n erabilitako iragazki geografikoak dialekto (oso) modernoen —XIX. mendeko dialektoen— gainean antolatuak direla eta, beraz, gehienik ere EBZko egoera berreraikitzeko balio lezaketela; seguruenik ezta hori ere —hizkuntz egoera modernoagoak baino—, eta inolaz ere ez AEM eta are gutxiago AEZ. Gainera, ohar bedi dialekto-iragazkia eskuzabaltasun osoz ezarria dela; kontrara, hertsi-hertsian ezarririk edo irizpide eta iragazki hertsiagoetara joaz, eragin handirik ez bide luke erro monosilaboentzat (hauek usuenik dialekto guztietan lekukotzen baitira), baina bisilaboek beherakada larria pairatuko lukete —zero absolutura edo horretatik hurbil—, hauen lekukotasunen egoera oso bestelakoa baita.

## 4.4. Aitzineuskara Zaharraren Gramatikaz

### *4.4.1. Aurrekariak*

> (…) since some morphology may originate from syntax via morphologisation, and some morphology may end up in lexical stems via demorphologisation, morphological reconstruction must not be confined to the comparison of morphological forms, but needs to be open to finding some of its evidence in syntax or in the lexicon (Koch 2003: 272).

AEn IS nahiz ASko morfologia askozaz urriagoa zela uste izateko arrazoiak aspalditik dira: ezaguna da, adibidez, IS soilagoa zela Erdi Aroan XVI-XVII. mendeetan baino eta *-aga/-eta* pluralgileak berantiarrak direla; horrenbestez, horien gainean eraikitako «deklinabidearen» herena ere bai (ik. Mitxelena 1971a, Manterola 2015). Singularreko kasuak ere, artikuluaren gainean antolatuak izanik, ezin hura baino lehenagokoak izan (ik. § 3.6). Horrezaz gainera, «surdeclinaison» delakoak (*-rekin* = GENzah. + *-ki* = SOCIAT + *-n* = INES, *-rentzat* = GENmod. + PROLAT, etab.) etengabe gehitu ditu kasuak sisteman, gainerako hizkuntza eransleetan bezala (cf. uralikoa edo dravidikoa). Eratorpenari dagokionez, oso berandu arte «latinetiko» zein erromantzetiko atzizkiak ez dira bertakotu, ezta ondare zaharrekoak erro mailegatuetara hedatu ere, eta, nolanahi ere, horien benetako erabilera hizkuntzan oso apala izan da (ik. Lakarra 1997a, Sarasola 1997, Blanco 2014); postposizio gehienak, azkenik, ia batere gramatikalizatu gabe dira, bai formaz eta baita semantikaz ere.

Ez da zalantzarik (cf. Mitxelena *FHV*, 1981a, Trask 1997, etab.) AEk ez eze akit. eta VIII.-IX. mendera arte ez dela artikuluaren garapena hasten latinak edo germaniko zaharrak ere garatu ez zuten moduan eta hizkuntza erromantze zein germaniko modernoek eta are XX. mendeaz geroztiko suomierak —baina ez XIX.ekoak— egin duten legez.[140]

Julen Manterolak argitu du erakusletik artikulura bidean zen zenbait zalantza —zergatik *lurr-e-an* baina *mendi-an*?— eta baita mugagabeaz kanpoko kasuen eransketa erakusleetan bertan egin zela eta emaitza berregina erantsi zitzaiola —ez atal bakoitza bere aldetik— enborrari, eta, beraz, kontrakzioak ez zirela hor gertatu artean sinetsi bezala, aurretiaz baizik. Ikuspegi berriak baduke azentuaren historiaz edo banaketa dialektalaz oraindik agortzeko den ondoriorik. Halaber, artikuluaren kronologiarekin lotu dituelarik Donemiliagako (1025) Reja ezagunean ageri den hainbat *-ha* (gehi *-hea*

140. Lapesak erakutsi zuenez, inguruko erromantzeetan VIII. mendean *hasten* da artikulu kategoria zabaltzen. Bide batez, *har* horretatik *har* 'har(i)tu'-ra iristeko jo liteke Ginea Golkoko eta enparatuetako hizkuntzei buruzko Carol Lord-en lanetara multzo-aditz honen gramatikalizazio adibide argietarako.

< *-ha* + *-a*-ren bat),[141] 3. graduko artikuluaren gramatikalizazioaren *post-quem* data II. milurtekoaren hasierarantz hurbildu beharra dugu, Lapesak erakutsi bezala, Hispaniako erromantzeetan fenomenoa VIII. mendean hasia baita (ik. Lakarra 2013b: 295).

Aurreko lan batzuetan (Lakarra 2006b, 2008a) erakutsi dugu AEn aditz jokatua ez zela inolaz ere orokor eta bai urri eta ia agortu, latinarekiko ukipena baino lehen ere ez baitzuen kide gehiago onartzen. Komunztadura marka ugariak eta gramatiko zenbaiten eta zaletu askoren edergailu diren milaka adizkiak ere ez bide dira betidaniko; aditz «inpertsonaleko» garaiaren froga ezagunei (cf. Trask 1977, Gomez 1994) gehiago erants dakieke eta are «orainaldiko» eta «lehenaldiko» oinarrizko formek ere noizbait —Erromaren kutsu gaiztoa baino lehenago— komunztadurak oro (denbora, aspektu eta modu, persona-markaz landa) peitu zituzten eta **dar* [> *jarri*] eta **den* [> *eden* 'amaitu']-ren gainean —hots, gero ALag eta are morfema lotuetan gramatikalizatuko ziren— multzo aditzen gainean eratu ziren (ik. § 4.4.6.3).

### *4.4.2. Morfologiaren fonologizazioaz*

Ezagun denez, Givón-ek «gaurko morfologia atzoko sintaxia» aldarrikatu zuenetik, hizkuntzalari asko saiatu da ohartuki morfologia jakin batetik abiatuaz iraganeko sintaxia berreraikitzen, berrikuntza teorikorik aldarrikatu gabe, askozaz lehenagotik eta baita gero ere, Givónen esaldi famatuaren berririk edo harekiko zorrik izan ez arren: Sagarten txinera zaharrari buruzko liburu osoa (1999) edo gehiena izan bide liteke horren adibide berak —eta, dakidala, beste inork— beren-beregi horrelako esaldirik ez dakarren arren. Ene aburuz —«hizkuntza morfosilabikoetarik» landa (§ 4.5.4), beharbada—, horren zabaldua ez den «gaurko fonologia atzoko (edo herenegungo!) morfologia» edo antzeko zerbaiten alde ere egin bide liteke hainbat hizkuntzatan, gurea barne.[142] Hara zenbait analisi-adibide hurbilketa horren alde.[143]

Lehena aditz-erroetako diptongo ugaritasuna genuke (cf. § 4.4.6.1). Noizbait aditz-erroetako enborrak CVC ~ (CV)(CV)CVC ziren arren, hots-aldaketek —batez ere erroko nahiz aurrizkietako bokalarteko ahostunen erorketek— hiato eta diptongoak ekarri zituzten, morfologiazko oposaketa zena (erroa : aurrizki + erroa) fonologiko (V : D) bihurtuaz. Sagartek txinera zaharraz dioen bezala, fonologia azaltzeko garaiko morfologia

141. Ik. 102. oharra zehaztasun gehiagotarako.

142. Txinera zaharrari buruzko Sagarten (1999) liburu ia osoa izan liteke esaera horren adibide, nahiz hor ez enparatuetan ez dudan aurkitu horrelako ezer.

143. Gogora (ik. § 4.4.6.1) Mitxelenak *jardun* eta gainerakoetan «*jar* izenki ezezaguna» ikusi uste zuela eta horren ezintasunaren zergatia: *FHV*-n azaldu bezala, *j-* euskal altxor zaharrean aditz aurrizkietako **e-* batetik dator.

zaharra ezagutu beharra dugu; alderantziz, fonologia-azterketa sinkronikoak morfologia diakronikoa argi lezake.

Bigarren kasua erro-hasierako dardarkariei dagokie. Aditz-erroei edo enborrei aurrizkiak (_*e-, *e-da-_) ezabatzean, usu /r/ edo /R/ —nahiz rC taldea— gelditzen zaigu $C_1$ kokagunean: _**e-rosi, **e-rein, **(h)e-rio, **ja-rraiki, **ja-rdun, **ja-rdetsi, **ja-rrugi_, etab. Lehen taldekoen artean zenbait _-ra_-aditzak dirateke, _eroan/eraman_ bezala; ez guztiak, ordea. Hauentzat _r-_ hori ezinbestean _l-_ batetik datorke r-/R- ezinezko direlarik erro eta hitzetan, —areago aurrizki/atzizkietan—, baina, ikusi dugunez, _l-_ ere ez da _*l-_ (etorkiz), _*d-_ baizik. Hortaz, _*dVC_ erro zenbaitek bai _d-_ alomorfoarekin (*_edin_, adib.), bai _l-_ alomorfoarekin, _d-_ > _l-_ bilakabideaz geroz sortu dituzte aditzak: *_din_ > _*lin_ → *_elin(o)_ [> *_eriho_ > _herio_] ~ _*e-da-lin(o)_ > _jario_ [ez **_edariho_ eta ez **_hedario_], etab. (ik. § 4.4.6.1).

Txinera historikoaren hitz-hasierako talde kontsonantikoak «morfologikoak» dira, hots, ezkerrekoa aurrizki batetik dator eta soilik bigarren C dagokio erroari (cf. Sagart 1999). Oraintsu arte, sinologoek hitz-hasierako kontsonante-taldeak «fonologiko» —IE eta kartvelikoaren _muta cum liquida_ gisakoak— eta «morfologikoen» —CVC erroa, C-aurrizki batekin— artean bereizten zituzten edo berezi nahi zituzten, bederen, lana ez baitzen batere erraza. Euskaraz, txinerako horien paralelo garbiena, halere, —eta, beraz, zalantza gutxirekin, aurrekoa baino modernoagoa— erro-amaierakoa bide dugu: _hortz, bart, beltz_ eta gainerakoetan -CC horiek «kontsonante-multzo morfologikoak» dira, ez fonologikoak, soilik lehen C- baitagokio erroari, eta 2.a atzizki ezaguna (cf. _bor-tz, ahan-tz_, etab.) edo hurrengo morfema monosilabo higatua (_dut_ < _*du-da-_) baitugu (gogora bedi Artiagoitia (1990)-k «metrikaz atetikotzat» jo zuela azken -C).

Alabaina, goiko R- horietara bihurtuaz, bada hor ere txineraren ereduaren paralelorik: bortitz horietan —eta horien aurreko talde kontsonantikoetan (ik. § 3.3.4)—[144] fonologizatu egin da kate morfologiko oso bat (*_e-da-ra-_; cf. § 4.4.6.1), urrats bat gehiago AE monosilabikotik euskara bisilabiko edo polisilabikorako bidean eta lehengo fonema txistukari eta ozen urriagoak, -CC- taldeen bilakabidez, lehen halako bi bilakatzeko.[145] Hots, «gaurko (AEMko) fonologia, atzoko (AEZko) morfosintaxia».[146]

144. Ez soilik horietan, jakina: cf. _ardano, jardun, urgatzi_, etab. Bide batez, esan dezadan C-taldeekiko atala ez bide dela _FHV_-ko hoberena eta merezi zuela A. Begiristain prestatzen ari den azterketa berria.

145. Hemendik ikertu bide liteke zergatik ustez 3. silaban sortutako /h/-etarik zenbait aldatzen diren hitz-hasierara (han gordeaz) eta bestetzuk ez (desagertuaz): cf. _herio, harea, hodei, heuragi…_ baina **_hard(a)o_ (_ardao_, etab.), **_harrain_ (_arrain_), etab. Alabaina, 2. taldekoak zehatzago miatuaz, _*-n-_ (> _h_) ez da 3. silabaren hasieran, 4.arenean baizik, _jaio_ 'nacer' (< _*e-da-din-o_) edo _jario_-n (< *_e-da-lin-o_) bezala. Ik. gorago testuan.

146. Bilakabide berbera izan ez arren, C-talde > bortitz dugu /L/ eta /N/-ren jatorrian eta horrekin, morfologia à fonologia eraldaketa lehengo erroaren -C gehi atzizkiaren C- C bakar bihurtzean.

### *4.4.3. Gramatikalizazioa eta berreraiketa*

> One of the most significant recent developments in the field of historical linguistics has been the identification of what Fox (1995: 194) calls «'laws' of language development» —a methodology «for determining which changes are more likely than others, and… criteria for determining the overall direction of linguistic change.» This methodology is largely an aspect of what has come to be known as «grammaticalization theory» (Shields 2005: 53).

#### 4.4.3.1. Oinarriak

Morfema lexikoak gramatikal edota lehendik gramatikal zirenak are gramatikalago bihurtzea garrantzitsua da oso hizkuntza-berreraiketarako, eta Meillet edo Kuryłowicz bezalako diakronista ospetsuenek aztertu dituzte honelako bilakabideak. Nahiz oraindik eztabaidatu gramatikalizazioa gertakari autonomoa den ala beste fenomeno oinarrizkoagoen zordun, edota direkzionalitatea erabatekoa den (cf. Campbell arg. 2001, Fischer *et al.* 2004, etab.), gramatikalizazioa gertakari unibertsala da eta haren ikerketak asko lagun lezake euskararen berreraiketan eta euskal diakronia osoaren ezagutzan, dagoneko beste tradizio aurreratuago batzuetan egin duen legez.

Hara Campbellek (1998) bildu gramatikalizazio-bilakabideetarik erakusgarritzat hartutako lehen dozena:[147]

> (1) auxiliary < main verb; (2) case suffixes < postpositions; (3) case marking < serial verbs; (4) causatives < causal verb ('make, have, get, cause, force') + clause with another verb; (5) complementiser/subordinate conjunction < 'say'; (6) coordinate conjuction ('and') < 'with'; (7) copula ('to be') < positional verbs 'stand', 'sit' or 'give', 'exist' (Spanish *estar* 'to be' < Latin *stare* 'to stand', Spanish *ser* 'to be'; Quechua dialects *tiya-* 'to be' < **tiya-* 'to sit'); (8) dative case marker < 'give'; (9) definite article < demonstrative pronoun; (10) direct object case markers < locatives or prepositions (for example, a

---

Beraz, forma kanonikoaren aldaketa dugu: [ERRO monosilaboa + ATZIZKIA] > [ERRO bisilaboa]. Asimilazio osora eta bortitzera iristen ez diren zenbait kasutan ilundu edo desagertu egin liteke aurreko morfema-muga (ik. § 4.3.8 [13]).

147. Arrunt gehiago biltzen ditu egileak: «(17) indefinite article < 'one'»; «(19) locative constructions < body-part terms», «(22) perfect(ive) < 'finish', 'complete', 'have'», «(23) preposition/postpositions < verb (preposition < VO; postposition < OV)», «(24) progressive < locative + non-finite verb […]» nahiz «(28) relative clause markers < demonstrative pronouns». Euskaraz batzuk bistakoak dira eta beste zenbait ezagut litezke lan handirik gabe (ik., adib., Lakarra 2013b).

dative marker has become an accusative marker in Spanish, Kwa, Bemba and so on); (11) durative, habitual, iterative < 'stay'; durative aspect < 'remain', stay, keep, sit'; (12) ergative < passive (only one of several sources of ergative marking)…

Euskaraz ezagunak dira zenbait gramatikalizazio, hala nola erakusleetarik artikuluetara doazenak, gipuzkera berantiarretik —beharbada behar baino gehiago— hedatuz doan *al* baiezko/ezezko galdera partikularena eta (behar baino gutiago) aditz laguntzaileen historia interesgarria; ik. § 5.6ko zenbait ohar. Fenomeno honen holismoak (higadura fonetiko nahiz semantikoa gertatu ohi da) eta geografia eta jatorri oso ezberdineko hizkuntzetan eriden litezkeen kidetasunek (ik. Heine & Kuteva 2002) errazki ahalbidetzen digute haren eragina marka gramatikaletan ikustea (cf. Lakarra 2013b): esaterako, ergatiboarena, Australiako eta enparatuetako hainbat hizkuntzatan bezala (bizidunetako) lokatibo orokor batetik dator: *-ga* > *-k* (cf. 1.p.sg. *-da* > *-t*, etab.), baina *-ga-n, -ga-n-a, -ga-z*, etab.[148] Datibo-markak GIVE aditzetarik sortu ohi dira hizkuntza askotan —ik. Lichtenberk (1985) antipodetako Kaledonia Berrikoez—, bai ISkoak eta baita datiboko aditz laguntzaileak eta are «dativus aethicus» deituak eta partitiboa ere; gure kasuan **nin* 'eman'-etik abiatuaz bai ISko *-i* (*nor-i*, *Julen-i*) eta baita aditz jokatuetako hainbat fosil azal ditzakegu aditz sintetikoan (*in-dazu*, *d-in-den*, *i-guzu,* etab.), datiboko laguntzailearen paradigma (*didazu*, *zenion…*), aditz jokatugabe zenbaitetako datibo-forma zaharkituak (*i-ra-kin*, *i-kas-i*, *i-ze-ki…*), eta baita aditzetako alokutibo-paradigmako sabaikaritze ezagun ugariak ere (cf. Lakarra 2008a).[149]

Gramatikalizazioen zerrenda errazki zabal liteke aspektu burutugabearekin (*da-* < **dar* 'SIT'), pluraleko *-de* < **den* 'FINISH'-ekin), prosekutibo/ablatiboko eta adjetiboetako markarekin (*-ti* < **din*[150] 'COME'), nagusitasuneko konparaketa-markarekin (*-ago* < *ha*

---

148. Bizidunak ergatibitate-hierarkiaren gailurrean direlarik, *-ga* ez bide da haientzat eta berezko duten funtzio horretarako sortua. Lokatibo-hierarkian, aldiz, hain apal dira non ezinbesteko duten zerbait berez ez dagozkien markak zilegiztatzeko: *mendian* / ***gizonan*, *menditik* / ***gizonetik*, etab.). Beraz, lokatibo > ergatibo eraldaketa bigarrenkaria da, Australiako hizkuntzetan ezagun den bezala; ik. Lakarra (2006a). Paralelo hertsi baterako txadikoan, ik. hemen (161. oh.-eko aipuan) Frajzyngierrek dioena 'place' eta marka horren arteko erlazioaz.

149. Testuan aipatu GIVE-en gramatikalizazio orokorra aski den arren De Rijken (1985) proposamena (**din* > **edin/jin*) gainditzeko, bada oraindik euskararen barneko arrazoi erantsirik: **n-* beharrezkoa da *indazu*ren eta gainerakoen *-n-* azaltzeko: cf. *dagozu*, *dakizu*, ez ***dagonzu*, ***dakinzu*, etab.

150. Alomorfo zaharrena (*fase sparita* bezala oraindik *hordi*, *geldi, handi* eta besteren batean gordetzen da) bat dator baita *-di* futuro/ahalera zaharrarekin (*daidi, leidi*, etab.) beste zenbait hizkuntzatan bezala; cf. Heine & Kuteva (2002 s.u. COME) gramatikalizazio hauen guztien (eta gehiagoren) kideentzat; ik. Lakarra (2013b).

‘3. grad. erak.’ + *-go* ‘TO PASS’), moduko adberbio-atzizkiekin («completive»: *-to* eta *-ro), ra-* (< **lo-)* kausatiboa **don* ‘PUT’-etik, urruneko familiatasuna eta konparatibo arkaikoa genuen *-so* < **san* ‘TO SAY’, kopula (*da* < **dar* ‘SIT’), juntagailuak (*e-ta, e-do*), etab.

Ez da esan beharrik gramatikalizazioaren azterketa zehatza ezinbestekoa dela eta hark eman laguntza gabe berreraiketa hauetarik askok ezezagun eta ezinezko izaten jarraituko lukeela.[151]

#### 4.4.3.2. Gramatikalizazioa eta euskal morfemen historiaurrea

«Gramatikalizazio primarioa» (GP) —erro lexikoak morfema gramatikal bilakatzea— eta «gramatikalizazio sekundarioa» (GS) —morfema gramatikalizatuak are gramatikalizatuago bilakatzea— aztertuaz eta jakinik CVC zela lexema zaharren forma kanonikoa, ondorio garrantzitsuak atera ditzakegu morfema gramatikalen historiaz. Bidenabar, analisi horien azalpen-botereak froga erantsi bat ematen digu —egundaino dugun sendoenetarikoa— esan ahal izateko CVC zela erro lexikoen FK (forma kanoniko) zaharra.

Morfemen FK aztertzetik datozkigun emaitza horien artean genituzke ondokoak:

1. Ez da GP bisilabiko edo polisilabikorik: *-tate* eta *-tasun* mailegu (lat. *-tatem*) edo amalgama sekundarioak dira (*-tasun* < *-t-ar-zu-n*), hurrenez hurren. Orobat, *-heta* (*-eta*-ren aldaera arkaikoa) eta *-zaha* (*-za*-rena) ez dira GP, beste morfema zaharragoen amalgamak baizik: **he* + *-ta*, **-za* + *-ha*.
2. Ez da GP soil kodadunik: **-gan* ez zen lokatibo-marka zaharra, Jacobsenek, Traskek, De Rijkek eta bestek —baina ez Mitxelenak— nahi bezala, *-ga* + *-n* amalgama baizik, postposizio bilakaturiko erro soil osoa (CVC) ez denean.
3. Ez da CV morfema lexikorik (errorik); CV hau GParen FK dugu, hain zuzen ere: *ni, hi, gu, zu, ha, be-, no-, ze-, -da, -ga, -to, -de -ti/-di*, etab.; *lo* (< **don*), *su(n/r)*, eta gainerako salbuespen urriek -$C_2$ konposizioan edo bestelako arrazoiren batengatik (adib. berranalisiagatik) galdu dute.
4. CV morfemak CVC-tik datoz, h.d., GP dira. Adib. *da* < **dar, di/ti* < **din*, etab. eta *-t / -a* (< **da*) ez dira GP, GS baizik.
5. V-, -V < CV eta C-, -C < CV. *-i/i-* datiboko atzizki eta aurrizkia **ni-* (< **nin*)-tik datoz, *-t* ‘1. p.sing.’, *-k* ‘2. p.sing.’ *-da* eta *-ga*-tik, aditz zaharretako *e-*Ce-*

151. Baina ez gutxi gorabeherako hurbilketekin, noski; esaterako, ergatibo-markak hizkuntza askotan ablatiboetarik datozelako euskaraz **-tik* > *-k* proposatzea Palancar-ek (2002) egin bezala, onartezina ez eze, barregarria ere bada.

(*he-)-tik…; -*ta*-z ik. § 4.4.6.4. -*z* instrumentaleko marka *-*zV* berreraiki liteke (cf. *za* 'pl.' eta **zan* aditza, gehi -*zaz* < *-*za* + *za*) pleonastikoa eta *n*- '1.p.sing', *z*- '2.p.pl.' komunztadurak *ni, zu* izenordainetarik datoz, noski. Beraz, -*z, -t, -a, -k, -i*… GS dira.

6. -VC < *(C)V#C(V). (2)-ren eta (5)-en azpisaila dugu; honela, -*ak* (nom.pl., erg. sing. [eta erg.pl (ik. § 3.6)]) < -*(h)a* + *g(a)*.[152] Manterolak (2015) *ha* berreraikitzen du (kodarik gabe, ez **har*, orain arte bezala) 3. graduko erakusle eta artikulua. Aldiz, Uhlenbeckek atzizkitzat hartzen zituen -VC bukaerak (-*ats, -ar,* etab.) konposizioan C- galdu duten erroak dira (cf. *adats, aldats, ordots*, etab.), ez atzizki GP, ez GS, eta ez amalgama.
7. -rV (dat. -*ri*, alat. -*ra*, gen. -*ren*, etab.) aztertzean -*r* epentetikoa eriden dezakegu -V enbor baten eta V- atzizkiaren artean. Itxuraz, (4)-n sartuko litzateke, baina *r*-ezinezkoa da hitz eta erroetan eta, beraz, ezinezkoa da deklinabideko -rV guztiak **-rV nahiz -lV(C)-tik (**VlV* > *VrV* bidez) etortzea. -V da benetako atzizkia (*CVC > CV eta CV > Vtik), *r* epentetiko berankorrarekin. Jakina, aurreko bilakabide horretarako beharrezko diren -V enborrak garapen berankorrak dira CVC ereduko FK zuen hizkuntza batean, salbuespen ezagun batekin, ordea: izenordainak (*ni*, *hi*, *gu*, *zu*) eta erakusleak (*ha*, *be*-).
8. -TV > dV (> tV / V); hots, [(T ahostun / T ahoskabe / ø) + V] txandakatzea denean, zaharrena [T-ahostun + V] da zaharrena eta enparatuak horren ondoko GSak; hau da, orokortuaz —herskariz hasitako morfema gramatikal guztietara hedatuaz— «Trasken legea» deitua (Lakarra 2013b):

> (…) Finite forms are not part of my brief here, but I cannot resist pointing out that the existence of the competing forms -*ki* and -*i* suggests a common origin for both in an earlier *-*gi*. The splitting of an original *-*gi,* into -*ki* and -*i* would strongly parallel the split of the plurality marker *-*de* into -*te* (as in *dute*) and -*e* (as in Biscayan *dabe* < **daue*), with -*de* surviving in a few forms like *daude* (Trask 1995: 231).

Izatez Trasken legeak DV atzizkien bilakabidea baino ez du aztertzen edo, zehatzago, horien GSren alderdi berankor bat: Kuryłowiczen formula ezagunera joaz gramatikalizazioa (1) «morfema lexikoaren GRa» edo (2) «morfema GRaren areagotzea» dela diogunean, Trasken legea (2)-ren parteari dagokio soilik: Lakarra

152. Erakusleen pluralean den «ergatibitate hautsiak» (cf. Manterola 2017) erakusten du erg.pl./nom. pl. bereizkuntza berantiarra dela deklinabidean (Behe Erdi Arokoa?), hau bestearen ondoko baita sing. nahiz pl.ean artikuluaren bitartez, eta artikulua ere erakusleen garapen berantiarra dugu (IX. mendeaz geroztikoa, seguruenik).

(1995) eta ondoko lanetan erro lexikoen FK gisa CVC aldarrikatu dugularik, bistakoa da DV nahiz TV baino goragotik abiatu behar dela gramatikalizazioaren bilakabide osoa —ez bakarrik goiko (2), baina baita (1) ere— besarkatu nahi badugu. Nolanahi ere, bere interesa bermatu da dagoeneko berreraiketarako (Lakarra 2013b).

9. Bistan denez, Trasken legea soilik T ahulez hasitako erroen morfologizazioari dagokio eta *TVC > *hV (> TV/V) erantsi behar zaio T bortitzez hasi erroen morfologizaziorako: adib. **thor* → **-hor* (*lotsor, ahanzkor*, etab.); ik. § 4.3.6.

Morfemen forma kanonikoaren eta gramatikalizazioaren azterketa bateratuak oraindik AEren berreraiketarako aitzinamendu gehiago ekar bide litzake (ik. Lakarra 2016 eta inpr.-2; orobat § 4.6.8).

#### *4.4.4. AEZ: adjektibo-sail irekirik gabeko hizkuntza*

Jadanik Humboldtek sumatu zuen (Gómez 1996) sustantibo- eta adjektibo-kategorien arteko bereizkuntza euskaraz ez zela oso markatua, eta ziurrenik (cf. *FHV* 512, Mitxelena 1964) gutxiago zatekeen antzina. Honen erakusgarririk ezagun eta nabariena, bi kategorietan (eta usu baita adberbioan ere) sar daitezkeen izenkiak ditugu: *ilun*, *argi*, *bero*, *hotz, gaitz, ezti, gose, guri…* Traskentzat (1997: 210), ordea, adjektiborik ezak oso antzinako behar luke, izatekotan, adjektiboak eratortzeko atzizkien artean batzuk, hala nola *-din* (*urdin, berdin…*), [153] oso zaharrak direlako.

Azalpen trinkoagorik lor bide liteke, halere. Hasteko, kontuan hartu behar dugu adjektibo-kategoria izateaz edo ez izateaz dihardugunean, kategoria ireki eta ugaria dugula gogoan, hots, euskara modernoan eta Europako hizkuntzetan ezagutzen dugun tankerakoa. Alabaina, Dixon-ek (1977) proposatutako adjektibo-moten hierarkian oinarrituaz, bada arrazoirik uste izateko euskaraz ez dela betidanik izan ADJ kategoria ireki eta ugaria (cf. Lakarra 2005: 419-421).[154]

Dixonek zazpi multzo unibertsaletan banatu zituen ADJ kategoria askeko hizkuntzetan lekukotu ohi direnak, eta hierarkikoki antolaturiko lau mailatan ezarri zituen:

1. «adina» (*gazte, berri, zahar…*), «dimentsioa» (*labur, luze, larri, handi…*), «balioa» (*on, txar…*), «kolorea» (*zuri, beltz…*);

153. Traskek *-zu* (gero *-tsu*) eta *-koi* ere aipatzen ditu, baina bi hauek hobeto aztertu beharko ditugu *-din*-en kronologiakidetzat jotzeko.

154. Testuan emandako argudioez landa, gogoan izan bedi (cf. 160. oh.) Stassenen arabera «*kin*-hizkuntzek», besteak beste, ez dituztela adjektibo sail askeak ere izan ohi.

2. «giza joerak» (*alai, zakar, tentel, anker*…);
3. «ezaugarri fisikoak» (*gogor, lau, bero, samur*…);
4. «abiadura» (*arin, geldo, azkar*…).

Hots, hizkuntza batzuetan «adina», «dimentsioa», «balioa»… sailetako kontzeptu guztiak betetzen dira adjektiboen bitartez; beste batzuetan soilik zenbait dira horrela adierazten eta beste hizkuntza batzuek (hainbat kontinentetan) ez dute adjektibo berezirik edo oso gutxi, dozenaren bat edo are gutxiago usuenik.

Dixon ohartu zen ADJ gutxiko hizkuntzetan lehen mailako lau sailetan bildu ohi direla benetako ADJ guztiak enparatuko sailetarako bestelako hainbat bide baliatzen direlarik (baita lehen mailakoak zabaltzeko ere), hala nola, eratorpena eta elkarketa («zero eratorpena» barne), erlatiboak, partizipioak[155] eta mailegutza, noski; lehen mailakoetan ez bada «benetako» adjektiborik —zahar eta soilik—, gutxiago dateke hortik beheragokoetan.

Barneko hierarkia[156] ezaguna duen kolore-izenen saila hobets liteke aztergai bezala, erakusteko are lehen mailako adjektiboetan ere gehienak ez zirela jatorrizkoak, Dixonek aurkitu horiek ordezkatzeko bitartekoak baizik: eratorri (*bel-tz)* eta elkartuak *(urdin)*, partizipioak (*zur-i*, *gorr-i, hor-i*) eta maileguak (*berde, azul, gris, marroi*…). Antzeko zerbait esan liteke «adina»-z (*zahar* < **zan-(h)or, berr-i, gazte* < **ugatz-ge*…), «dimentsioa»-z (*han-di*, *la-bur, erraldoi* < *Roldan…*) eta are errazago —mailegaketa eta eratorpen ugari eta gardenagoarekin— hortik beheragokoez. Hortaz, Dixonen orokortasunez baliaturik, proposa genezake AEZn ez zela adjektibo-klase askerik.[157]

---

155. Koloreen arlora etorririk, bistakoa da goiko gehienak partizipioen bidez eratuak direla eta, beraz, adjektiborik zaharrenetarik asko aditzetarik atereak direla, hizkuntza tibeto-burmetan legez, dela tanietan (cf. Post 2006) edo enparatuetan (cf. Bhat 2000), zeinetan lehenagoko isolatzaile adjektibogabe eta aditz estatibo ugarikoak eransle bihurtu baitira, bide batez zenbait adjektibo garatuaz eta aditz estatiboak urrituaz.

    Bestalde, *gorri* edo *zuri* bistako etimologia hauek erakusten digute kolore-adiera ezin izan litekeela jatorrizkoa, sekundarioa baizik; *urdin*-ek gaur bertan «azula» ez den bestelako adierarik badu eta ez soilik koloreen sailean (janariekin edo ilearekin, demagun).

156. Hots, 60etarik ezaguna da (Berlin & Kay eta besteren lanari esker) ez dela 2 kolore baino gutxiagokorik eta bi direnean «zuri» eta «beltz» direla; hiru direnean aurreko biez gainera «gorri» izan ohi da, laukoetan aurrekoei «hori» edo «azul» erantsiaz («urdin» oso bestelakoa dugu) eta horrela gehituaz.

157. Bide batez, Dixonek 2004an aldatu eta munduko hizkuntza guztietan ADJ kategoria eriden litekeela aldarrikatu arren, diakronista askori oso eroso egiten zaio 1977ko analisi zaharra. Azkenen artean ik. Bozzone (2016), zeinek IE zaharrenean ez zela ADJ Nussbaum, Rau-k eta bestek ikertu duen sail berezirik ondorioztatzen duen (aditzak baizik), gero ADJ «Caland

Bestalde, Bhat-ek (2000) eta Postek (2006) erakutsi dute aditz estatiboak dagozkiela hizkuntza isolatzaileei eta ADJ askeak eransleei, tibeto-burma klasikoetan (~ tanietan) eta dravidikoetan oinarrituaz. Kontuan izanik euskaraz kolorearen alorrean ez eze gorengo gainerakoetan ere partizipioak direla nagusi benetako adjektiboek ordezkatzen dituztenen artean, pentsa genezake euskaraz ere ADJ zaharrenak aditzetarik datozela.

Orain artekoa beste irregulartasun batekin (I-ADJ hurrenkerarekin) lotuaz, ez bi anekdota interesgabeko baizik eta bien bitartez berreraiketa morfosintaktiko sakonagora irits bide gaitezke. Alegia, berreraiki litezkeen hizkuntzaren garairik zaharrenetan ADJ berezirik izan ez bada eta gero joan bada garatuaz Dixonek azaldu lau bideetarik, itxaron genezake kategoria berriak ez I-ren ezker baizik eta eskubi kokatzea: hor dira (edo horrantz hazten dira) adjektiboen iturri diren eratorri, partizipio, mailegu eta, agian, esaldi erlatiboak (ik. Krajewska 2017). Bestalde, kokagune hori da ADJk beti hartzen duena VSO hizkuntzetan —horrela berreraiki zuten AE Gómezek 1994an eta Gómezek & Sainzek 1995ean, orain artekoekin zerikusi gutxi duten datu eta argudioekin— eta nahiz Greenbergek eta Dryer-ek ukatu osagai horien hurrenkeraren garrantzia, oso bestelakoa da Hengevald, Rijkhoff & Siewierska-ren ondorioa ere:

> Our data suggest that Dryer's refutation of the correlation in question may not be fully justified. While overall the location of the object relative to the verb is not a good predictor of the location of the lexical modifier relative to the head in referential phrases, there is a subset of languages for which a clear correlation between the two can be discerned. (…) Significantly, predicate-medial languages are not involved in this correlation, which vindicates Greenberg's original universal formulated with respect to SOV and VSO languages and not VO as opposed to VO ones. Thus our parts-of speech typology rehabilitates a correlation, be it in a somewhat modified form (2004: 560).[158]

Diakronista legez irregularitate honekin eta gainerakoekin tipologo askok eta diakronista gehiegik usuegi hartu ohi dutenaren kontrako bidea hartu behar dugu: hots, euskaraz ADJ beti eskubi izanik, eta bestelakoren aztarnarik ez delarik, eredu tipologiko bezala hauta dezagun ez hurrenkera horrekin soilik bateragarri edo zilegi dena, baizik eta hurrenkera hori sistematikoki eskatzen duena. Dirudienez, SVO eta SOV hizkuntzek I-ADJ zein ADJ-I ordena izan badezakete ere, «V- hizkuntzek» beti —edo, gutxienez, % 100etik askoz hurbilago % 50etik baino— I-ADJ badute, hau dugu lehen aukera, erabaki horrek hizkuntzaren morfosintaxiaren beste zenbait alderdi aldatzera behartuko

sistemaren» bidez garatu omen zirelarik.

158. Lot bitez honekin § 4.3.4n bildu Gilen oharrak prosodikoki VSO/VOS SOVtik hurbilago dela diotenak, ez SVOtik, itxuraz legokiokeen bezala.

bagaitu ere. Bestalde, ohar bedi hainbat berreraiketatan egungo egoera modernoa errazegi errepikatu ohi dela (argudio erantsi gabe) eta horren aurka mintzo direla beste ikerketa batzuk ere, dagoeneko aipatu Gómez eta Sainzena, demagun. Ezagun denez, diakronistek (berreraikitzaileek bederen)[159] ez dute inoiz ezer erdietsi erregularitateetan oinarrituaz edo irregularitateak ahantziaz eta estaliaz, baizik eta hauek azalduaz erregularitate eta lege zaharragoak erdietsiaz. Nago honaino ikusitakoa aski dela euskarazko I-ADJ ordena halabehar hustzat ez jotzeko. [160]

#### *4.4.5. ISko flexioa*

##### 4.4.5.1. Aitzinekoak

Euskara historikoan —agian edozein hizkuntza eransletan bezala— ISko flexio-markak gehituaz eta luzatuaz joan dira historikoki, «birdeklinaketa» (Lafitte 1979 [1944]), pleonasmo eta hiperkarakterizazioaren bitartez:

*Aita-re-ki[de]-n* *etxe-rean-ik* *baten* → *batean* → *batetan*

§ 3.5en erakutsi den legez, Mitxelenak (1971a) irekitako bidetik garatuaz, Manterolak (2015) flexio-marken sistemako bi heren berreraikitzeko oinarriak jarri ditu, erakutsiaz zein izan den bilakabidea erakusle flexiodunetarik artikulu flexiodunetara eta hortik ISko buru lexiko flexiodunetara. Dela singularrean, dela pluralean, artikuluaren gainean eraikiak izanik flexio mugatuak, haren gramatikalizazio eta hedadurarekin lotuak dira eta, ondorioz, K.o.-ko I. milurtekoaren akabuan edo II.aren hasieran abiatuak ditugu bilakabide horiek, aurretiaz oso bestelako flexio-sistema suposatu behar delarik;

159. Gilek ez du diakronia bere lehentasunetan baina «It may be, then, that the most fruitful approach to the problema is diachronic» aitortzen du (1986: 216-217) ikusiaz VSO/VOS egiturek dituzten «kontraesanak». Nahiz Givónengandik hartu SOV > VSO > SVO bilakabideak guri asko ez lagundu, hurbilketa Greenberg eta haren jarraitzaileek ingelesaren ADJ-I izenaren aurrean anekdota garrantzigabekotzat jotzea baino askoz egokiagoa, noski. Bistakoa denez, bai Greenbergek eta bai aurreko eta ondokoek ere bazekiten hizkuntza hori modernoki SVO izan arren lehenago —latina eta gainerako hizkuntza IE zaharrak bezala— SOV zela eta adjektiboak bere kokagune zaharra gorde duela.

160. Argudio aske gehiago Stassenek (2000): «tensedness universals of adjective encoding» deritzona: «a. If a language is tensed, it will have nouny adjectives. If a language has nouny adjectives, it will be tensed; b. If a language is nontensed, it will have verby adjectives. If a language has verby adjectives, it will be nontensed» § 4.4.6an AEZ «non-tensed» gisa aurkezten delarik ondorio logikoa da ondoko garaietan (Dixonen lau bideez) hedatzen diren ADJ gehienak (maileguez landa) «aditzetikoak» izatea, tanian bezala ADJarena hortik askatutako kategoria baita (ik. 143. oh.).

horrenbestez, «deklinabide indefinitua» geldituko litzaiguke, herenik zahar eta ilunena, beharbada.

Haatik, aski garbi ezagutzen dugu —inoiz aspaldidanik— horko beste hainbat markaren osaera: ergatiboarena, datiboarena (_-i_ < _*nin_), destinatiboarena (_-r-a_ < _*dar_), ablatibo-prosekutiboarena (_-ti, -tik_ < _*din_), soziatiboena (_-gaz_ < _-ga_ + _-z_, _-kin_ < _*-kide_ + _-n_), etab. Lakarra (2013b)-n iradoki dugu instrumentaleko _-z_ < _za_(_n_) kopulatik datorkeela, hizkuntza txadikoetan eta bestetan legez (Frajzyngier 2002), eta erants genezake orain inesiboa (_*non_-etik), _joan_-en forma aurrizkigabetik, alegia (cf. Heine & Kuteva 2002, s.u. GO), izenordain indefinituetako _no-_ oinarria bezala: cf. _no-r_, _no-n_, _no-la_, etab.

Azken milurtekoan leku-kasuetarik landa urrituaz joan den «deklinabide mugagabea» ere ezin pentsa genezake «betidanikoa» edo, gutxienez, AEtik zuzen-zuzen datorkigunik. Zail da kasu bakoitzaren kronologia ikertzea, are kronologia erlatibo baten barnean ere. Nolanahi ere den, baditugu ikerketa horretarako zenbait argibide: hasteko, ez da zer pentsatu sistema osoa bat-batean sortu zenik, egitura oso ezberdinen gramatikalizazioa izanik; ezaguna da, adibidez, ergatibo-marka euskal gramatiketan «bizidun-marka» gisa aurkeztu ohi dela —nahiz ez dugun horrelakorik idoro lokatiboetarik landa—;[161] alabaina, diakronikoki zehatzago litzateke, eta arruntago Australiako hizkuntza ergatibo ugarien marken bilakabidea ezaguturik, «_-k_ ergatibo marka» _-ga_ lokatibo orokorra + -ø subjektu-markaren berranalisiaren ondokotzat hartzea.

Bestalde, multzo-aditzak dituzten hizkuntzek ez dute ISko eta (noski) ASko flexiorik, ezta «_with_-hizkuntzek» ere Stassenek erakutsi duen bezala (cf. § 4.5); AEk lehendabizikoaren aztarnak (ik. § 4.4.6.3) eta euskarak bigarren egituraren zenbait lekukotasun gordetzen dituelarik, zilegi bide da pentsatzea ISko kasu-marka oinarrizkoen (mugagabeen) atxikitzea ez dela XV-XVI. mendeetako lehen lekukotasunak baino milurteko askoz lehenagokoa. Hots, ez AEZkoa eta ezta AEMkoa ere guztiena eta ezta gehienena ere, beharbada, baizik eta EBZren lehen haustura aurretikoa. Flexio-markak —beste zaharrago batetik ez datozenean ergatiboarekin ikusi bezala— aditzen (batez ere multzo-aditzen) gramatikalizaziotik sortu dira usu munduko hainbat hizkuntzatan (ik., adib., Campbell 2013). Euskaraz hori da datiboarekin gertatu dena —ISko _-i_ (eta ASko _i-_) marka _*nin_ 'eman'-etik dator munduan

---

161. Cf. «If the noun is a [-LOCATIVE], as is the case with all animates (and pronouns referring to them), then in the locative function it must be marked by a special morpheme, which in some [Chadic] languages is cognate or even identical with a lexeme meaning place» (Frajzyngier 2002: 170). Aurreko orrian esaten zaigu [+LOCATIVE] direla hiri- eta herri-izenak; arrazoi honexegatik dugu euskaraz _Burgos-ko_, etab. baina _oihan-e-ko_, etab. Gure kasuan 'tokia' adierazten duen _**ga_ errorik ez dugu (cf. _egon/igan_) baina bistakoa da toponimiako _-ga_ marka honek duen 'place' balioa.

barrena GIVE aditzeko hainbat eta hainbat kiderekin gertatu bezala, cf. § 4.3.1— eta baita enparatuekin ere: lokatiboko *-a* eta *-t* ere **dar* SIT-etik dator, ablatibo-prosekutiboko *-ti* **din* COME-tik, *-(ra-i)-no* **non* GO-tik, etab.

Leku-kasuetan (ik. § 4.4.5.2) badirudi *-e-* bat jartzen zela kasu-marka espezifikoa baino lehen; *-e-* hori epentesitzat jo ohi den arren, bada hainbat arrazoi beste jatorririk bilatzeko (ik. hurrengo atala): *lurr-e-tik, lurr-e-(r)a, lurr-e-ko…* are historikoki leku-kasuetarik urrunduriko ergatiboak ere (*gizon-e-k*); bestalde, *-e-* hori bat dator genitiboaren markarik zaharrenarekin: *hi-r-e*. Pentsatzekoa da —Manterolak «deklinabide mugatuko» marka berantiarragoekin erakutsi bezala— ISko nukleoak (I eta ADJ) biluziak izatea egun bezala eta preposizio zaharraren *her* > **he* > *e* gramatikalizazio bilakabidearen ondoren, leku-marka espezifikoak *-e-* horiekin batera atxikitzea IS haiei (ik. § 3.6):

[[*lur gogor*] [**he(r)*-SIT]], → *lur gogorr-e-ra,*
[[*lur gogor*] [**he(r)*-STAY]], → *lur gogorr-e-ko,*
[[*lur gogor*] [**he(r)*-COME]], → *lur gogorr-e-ti*,
.....

#### 4.4.5.2. Aitzinlokatiboa berreraikiz

Leku-kasuetarik landa, geratzen zaigun kasu gramatikala genitiboa dugu (-ø absolutiboarentzat ez da alomorfo zaharragoren lekukotasunik), eta argi da pronominaletako *-e* (*neure, gure*, etab., eta ~1125 *Jaun Ortire semea*; Mitxelena 1969) dela izenkietako eta *zuen* izenordain modernoko *-en* baino zaharrago eta arkaikoago. Alomorfo berankorragoko *-n* ez bide da inesiboaren gehiketa baizik, beste hizkuntza batzuetan bezala lokatibo bat sasi-genitiboari ezarria (cf. Authier 2013, Kaukaso-Ekialdeko zenbait hizkuntzaz): bizidunak dira benetako jabe —hortik *-e* izenordain zaharretan— eta, aldiz, hauei berez lokatiboak ez zaizkie zilegi. Jatorriari dagokionez, beste kasu batzuekin jazotakoaren aurka, ez dirudi *-e* hau erro lexiko batetik datorrenik (ik. beherago).

Euskara historikoak hainbat leku-kasu ditu (*-tik, -ra, -ko, -n*, etab.) eta baita horien petik ziren beste batzuk (*-n* eta *-ga*) ere, gutxienez, Arrasateko Erreketako baladako *oñeztar barruangoak*-en, *handik, hemengo…* deiktikoetan edo *Be-n-goa* (***Behekoa*) bezalako beste zenbait fosiletan dakusagun legez, itxarotekoa dena ISOLATZAILE > ERANSLE bilakabidea izan duten hizkuntzetan, hainbat tibeto-birmaniarretan bezala (cf. Bhat 2000, Lakarra 2006a).

Hainbat hizkuntzatan genitiboa lokatiboaren bilakabide edo espezializazioa da: cf. lat. *de ciuitate* / ***de Petro* : gazt. *de Madrid* / *de Pedro*. Bestalde, lokatiboak 'hurbil, hertsi' esan nahi duen lehenagoko pre- edo postposizioren batetik sortu ohi dira. Euskaraz,

ordea, leku-kasu batek ere ez du gordetzen gero **e* genitibo zaharra eman zuen aitzin-lokatiboren aztarnarik.

§4.4.3.2n ikus daitekeenez, CVCren gramatikalizazio primarioa CV da, eta sekundarioak C edo V izan litezke; beraz, *-e* genitiboa *CeC erro batetik datorke (*Ce-ren bitartez), gramatikalizazioan, ohi bezala, -$C_2$ galduaz lehen urrats formal gisa, baina arrazoi edo fenomeno espezifikoen bidez azaldu behar delarik —ez gramatikalizazioaren orokorretan oinarrituaz)— ezkerreko $C_1$-ena. §4.n aipatu aitzin-semantika gogoan, ez zait bururatzen *CeC horrentzat **her* baino hautagai hoberik.

Erro horrek ez du izartxoren beharrik, haren aztarna formal eta semantiko garbiak baitira *hertsi*, *itxi*, *etse*, *heste* / *hertze*, etab. Erro hau izan zen, hain zuzen, Lakarra (2010a)-n proposatu genuena *hiri*$_2$ 'villa'-ren (cf. gazt. *cerca*$_1$ '(adberbioa), hurbilekoa, etab.' eta *cerca*$_2$ 'adj. hertsi, iz. hesi'); jatorritzat *hiri*$_1$ 'gertu, hurbil denbora eta espazioan' ekialdeko dialektoetan gordetzen da oraindik eta lehenago gainerakoetan ere baziren toponimiak (*Errekiri*, etab.) dioskunez.[162]

*Her* eta *-e* arteko urratsa, *he,* Erdi Aroko *goihen* eta toponimiako -*(h)e-ta*-n lekukotua dugu; honi dagokionez, bai *h-* horrek eta baita bere sare lexikoak are zailago egiten du Schuchardtek bezala jatorri latindarra aldarrikatzea.

Gainera, ez da guztiz egia euskaraz *-e* aitzin-lokatiboaren aztarnarik ez denik leku-kasuetan; izatez, guztietan dugu (*-e-tik, -e-ko, -e-n, -e-ra*…) baina ez da horrela azaldu ohi, C-enborretako epentesi hustzat hartzen baita: *mendi-ra* baina *oihan-e-ra*, etab. Alabaina, epentesi hori oso *sui generis* genuke, zeren eta *-e-* bidez desegindako C-taldeek (*nk, nt, lk, sk, st,* etab.) ez baitute epentesiren beharrik deklinabideko leku-kasu horietarik kanpo: cf. *zotinka, eztulka, kantu, noizko, esku, bost*, etab.). Are gehiago: epentesi hori ez da beharrezko (C-taldeak berberak direlarik) leku-kasuetan ere, leku-izen bereziekin ari garenean: *Irungo, Oizko, Oiartzundik, Oskoztik*, etab. eta baita *Bazterko*… (*Bazter* herrikoa…) baina *bazterreko, bazterretik*, etab., Mitxelenak (1969a) Erdi Aroko lekukotasunekin markatu legez.

Aurreko hizkuntza-egoera batean, beraz, *-e-* ez zen epentesi huts, «lokatibo orokor» bat baizik —gero goian aipatu *-n* eta *-ga* bezala— eta horregatik leku-izen arrunt guztiei ezartzen zitzaien; gogora bedi erroek CVC egitura zuten bitartean eta atzizki eta -Vz amaitu bigarren osagaiak orokortu artean guztiak zirela -C enborrak. Erants aurrekoari euskara zaharreko benetako epentesiek *muta cum liquida* taldeak haustera zuzenduak diruditela; hauetan, ordea,

162. Ez dirudi *hiri*$_1$ eta *hiri*$_2$-ren artean loturarik ez balitz bezala (cf. *Apellidos vascos*, s.u.) jarraitzea egoki denik; cf. Frajzyngierren aipua kapitulu honen hasieran.

1. hizkuntzan benetan ezinezko ziren taldeak hausten zituzten (*br, tr, gr, kr*), eta
2. ez zen beti bokal jakin bat gehitzen aztertzen ari garen *e*, baizik eta eskubiko silabakoaren kopia tartekatzen, zein ere den hau: lat. *librum* > eusk. *liburu* baina *frontem* > *boronte, gratia* > *garazia*, etab., eta ez *-e-*, *-i-*, schwa edo aurrez ezarritako besteren bat Ekialdeko zenbait hizkuntzatan bezala (cf. Henderson 1951).

Horrenbestez, ustezko «epentesi» hau, leku-izen arruntetako (***Burgos-e-ko, **Zarautz-e-ra* baina *lats-e-ko, arrats-e-tik*) leku-kasuetan eransten zen soilik —baita gero ERG bilakatuan ere, baina ez partititiboan— eta horren bidez zilegiztatzen ziren ablatibo, inesibo, alatibo eta gainerako marka espezifikoak hartzeko. Gertakari honek badu zerikusirik, noski, gorago (161. oh. *-ga*-ri buruz) esandakoarekin: hots, leku-izen bereziak berez dira [+LOCATIVE] eta horregatik ez dute *-e-* «lokatibogilearen» beharrik. Bisilaboetan eta handiagoetan -V enborrak sortzean —ez da horrelakorik monosilabo lexiko ugarietan—, dela maileguen, dela (C)V atzizkien, -C erorketen edo bestelako fenomenoen bitartez (cf. Lakarra 2009b), aitzin-lokatiboko *-e-* epentesi gisa berranalizatu zen.

Izan zen beste epentesi bat ere (*r*) -V enborra + V- kasu-marka topaketentzat: *Donostia* + *-en, -i, -a,* etab. à *Donostiaren, Donostiari, Donostiara*, *mendi* + *-en, -i, -a,* etab. à *mendiren, mendiri, mendira*, etab. Oraintsuago, zenbait *-e* enbor berri sortu ziren (*atze, aurre, Ustaritze, Parise*, B *gane,* etab.), lehenagoko *hatz-e-ko* > *atze-ko, Paris-e-n* > *Parise-n, gain* > *gaineko…*) eta enparatuen berranalisi gisa (eta erroko silaba-kopuruaren hazkundearekin). *Zarautz-e-r-a* eta —batez ere— *Jon-e-r-i* bezalako epentesiak, aldiz, guztiz modernoak dira eta arauemaileek desegoki eta araugabetzat dituzte.

Ikus litekeenez, *r*-epentesia (baina ez *-e-*) ez zen leku-izen arruntetan ezartzen, ezta soilik leku-kasuetan ere, saihestu behar ziren ISko flexioko V-topaketa orotan baizik: *mundu-r-a*, *m.-ren, beste-r-a, b.-r-en…* baina baita *Donostia-r-a, andre-r-i, Jainko-r-i, Errege-r-i…* *r*-epentesia lehenik izenordainetan garatu bide zen (guztiak CV dira: *gu-r-e, zu-r-i*, etab.), gero handik hedatuaz izenordain indefinituetara eta erakusleetara —hauek ere CV baitziren: *no-r, ze-r, ha-r, be-r*—, gero flexio mugagabera eta azkenik (erakusleetarik datozen artikuluak tarteko) definitu singularrera: *beste-ar-en, etxe-ar-i*, etab., *lurr-e-r-a, etxe-r-ik*, eta enparatuak bezala.

Genitibo zaharra aitzin-lokatibotik etortzeak azal bide litzake kasu-sistemaren eta horien bien zenbait arrarotasun: horietarik dira *-rean* (< **r-e-ha-n*) mendebaleko ablatibo arkaikoa, *RS*ko (168 *Ator[r]en baxen urrago narrua*) eta erronkarierazko (*garixuma egun baten bikain triste*) konparazioko-genitiboa, horren aldaera arkaiko orokorra (*are gehiago*), *mutillen batek eroango zaitu, ogi apurren batzuk jan nituen* «genitibo partititiboa», etab. Baliteke Lafittek *surdeclinaison* deitutakoaren zenbait alderdi berranalizatutako lokatibo zahar batez hobeki ulertzea eta ez *ab initio* genitibo gisa ulertuaz: *aita-ren-ga-n-dik*, etab.

Orain arte azaldu gabeko (cf. Trask 1995) *e-thorr-i, i-khus-i, j-a-kin*, eta gainerako aditz zaharretako **e-* (> *i-, j-)* ez bide da **he-* preposizioa baizik, aitzin-lokatiboaren jatorria bera, hain zuzen: cf. ingl. *to come, to go… to Peter* bezalaxe, eta horrela beste hainbat hizkuntzatan ere. Jatorri berokoek (*e-* + CV multzo-aditz gramatikalizatuak, cf. §4.4.6.3) dira zenbait partikula, hala nola *edo* —izatez **e-don*, *idoki, itoiten* eta gainerakoen gehi *-to* eta *-ro* atzizki modalen kognadua—, *eta* —*-(h)e-ta* deklinabidekoarekin eta *da* kopularekin hertsiki lotua— edo *ez* eta *ezer* (biak **ze*-tik), *inon, inor*, eta enparatuetakoa (< **e-no*) bezala.

### *4.4.6. Aitzineuskara Zaharreko aditza berreraikiaz*

#### 4.4.6.1. Irregularitateak eta erro-hedadura zaharrak

> Comme l'ont montré de nombreux théoriciens, la conjugaison hongroise, telle qu'elle apparait à l'aube même de l'histoire de la langue, est un appareil hétéroclite constitué de pièces et de morceaux. Cette hétéroclisie n'est pas en soi quelque chose d'insolite. Nombreuses sont les langues où la conjugaison présente une multiplicité de formes qui se trouvent rassemblées plus ou moins systématiquement pour exprimer la prédication sous différents aspects (Sauvageot 1971: 131).

Lafonek (1943) erro-eredu luzea eman zuen bere aditz zaharraren ikerketan, monosilaboetan has (V *da*, VC *utz-i,* CVC *e-thorr-i*), bisilaboak (CVCVC *jakin*, CVCV *jagi*) eta trisilaboak barne (VVCCVCV *aurtiki*, etab.), azpi-eredu ugarirekin guztiak. Alabaina, hurbilagotik begiratuaz eta izenkietan bezala —ez erakusle, izenorde eta partikuletan—, lekukotu enbor guztiak **e-* «hasierako bokala» (> *e-, i-, j-*)[163] + CVC oinarrizko egiturara eraman ditzakegu hiru eratako bilakabideen bitartez:[164]

a. *e-CVC formula soila edo kontrakzioekin: *e-thorr-i, utzi* < **e-duz-i* (cf. GZ *eutzi*, ZZ *eitzi*, BZ *etxi*).

*b.* *i*-CVC [*i-* < **nin*]: *igorri, ikasi, izeki, izan*; aditz hauek oro noizbait datiboko jokoa bide zuten zenbaitekin lekukotua den bezala (cf. Oregi 1974). Hemen eta (c2)-n, **e-i-(ra)*-CVC- berraraiki daiteke, Mitxelenak *izan* < **e-izan* (hobe, **e-i-zan*) egin bezala.

163. Deiturari dagokionez, cf. bantuaren «final vowel» (Good 2005); honen jatorriaz ik. §4.4.5.2 eta, zabalago, Lakarra (inpr.-2).

164. Bibliografia ugaria bada ere gaiaz, bereziki interesgarria iruditzen zait Frajzyngierren antzeko analisia hizkuntza txadikoetarako (2002: 1-26); liburu berean bada hainbat ohar eta xehetasun zirraragarri euskararen historiaurrearen azterketarako, hizkuntza horietan diren aditz-hedadurez eta hauek MA aditzekin eta preposizioekin dituzten loturez.

c. CVC horren hedadurak (kontrakzioekin edo gabe): [165]
 c.1. *ra-* aurrizkiaren bitartez: *e-ra-bil-i*, *e-ra-kuts-i.*
 c.2. (b) eta (c.1): *i-* eta *ra-* aurrizkiak: *(e)-i-ra-kats-i*; *(e)-i-ra-ze-ki*, etab.
 c.3. *da-* aurrizkiaren bitartez: **e-da-dus-i* > *jausi,* **e-da-khin* > *jakin*, etab. Ez dirudi (b) + (c3) konbinaketarik [***e-i-da-*…] izan denik eta are gutxiago (b) + (c1) [***e-i-da-ra-*…].

d. (c.1) eta (c.3.), biak batera: **e-da-ra-dan-o* > **ardano,* **e-da-ra-dun* > *jardun*, **e-da-ra-don-tz-i* > *jarauntsi*, **e-da-ra-goz-i* > *urgazi*.

§ 4.4.6.3n zabalago aztertu bezala, erro jokatuak ez bide ziren ehunka, lehendik ezagutu 60-70en herenak edo are gutxiago baizen: bat bakarra *e-bil-i* eta *e-ra-bil-i-*n, beste bat *e-san* eta *ja-san-*en [ < **e-da-san*], 3.a *e-goz-i*, *e-ra-goz-i, jauzi* (< **e-da-goz-i*) eta *urgazi-*n [ < **e-da-ra-goz-i*], etab.

Aurrizkiak fosildurik ziren hizkuntzaren lehen lekukotasunetarako eta baita askoz lehenago ere seguruenik. Izan ere (ik. § 4.3.6), AEMren akaburako ez bide du erro gehiagok **e-* hartzen, aditz mailegatu latindar bakar batek ere ez baitu horrelakorik eta are gutxiago *-da-, -ra-* edo hauen konbinaketarik.[166] Bestalde, ez delarik **e-hVC* egiturarik —bat, *eho* < **enon,* AE baino aski geroago, beraz—, pentsa genezake **Th-* > *h-* gertatu orduko agortua zela aditz (soil) zaharrak sortzeko bidea.[167] Antzeko zerbait gertatu bide zen Mitxelenak **d-* > *l-* bilakabide zaharraren salbuespentzat jotako «orainaldiko» (egiatan aspektu inperfektiboko) *da-* aditzekin; Lakarra (2006b)-n proposatu bezala, egiantz gutxiko salbuespenik ez genuke behar **d-* > *l-* erregelak iraun zuen bitartean adizkioi ezinezko gerta balitzaie «biluzik» gauzatzea, eta horretarako *ba-* edo *ez-*

---

165. Hara Hymanek bantuaren eta inguruko hizkuntzetako hedadurez egin aurkezpena:
 (1) We do not have a clear sense of the verb extension system(s) that existed at pre-Proto-Bantu stages. My goal at this workshop is to consider some of the issues arising in NW Bantu and its closest relatives: What are Bantoid verb extensions like? What, if anything, do they tell us about Proto-Bantu?
 (2) It is often remarked that the comparative study of Bantu (and Niger-Congo) verb extensions has been neglected in favor of noun classes. The same is true of Bantoid, e.g. concerning Grassfields Bantu.» (Hyman 2011: 1).

 Gure kasuan aditzetako erro-hedadurak ez aztertzeko aitzakia ezin izan liteke izen-sailak nahiz morfologia diakronikoaren beste alderdiren bat asko aztertua, jakina.

166. Bantuaz cf. «the evidence suggests that extensions remain largely productive. Discussions with educated speakers can often confirm this impression; they can readily produce examples of new ways of combining extensions or attach them to recent loanwords» (Blench 2010: 3).

167. Alabaina, baliteke aldi batez oraindik izatea e-CVC zaharkituen eta *da-* eta *ra* (*< *lo* < **do-*) aurrizkien (oraindik laguntzaileen) arteko konbinaketaren batzuk; (ik. infra).

bezalako partikulak hartu bide zituzten, oraindik partez B arkaikoko eta zaharreko testuetan kausitu bezala (cf. Lakarra 2006b eta 5-6. kap.). Beraz, **d-* aditzak AEM baino lehenagokoak dira, bestela **d-* > *l-* eta (akitaniera ondotik) *-l-* > *-r-* bilakatuko baitziren, kausatiboa egin den bezala (cf. § 4.4.3.1 eta beheraxeago atal honetan).

Erro-hedadurak ez ziren, noski, halabeharrez gertatzen AEn: munduko hizkuntzetan hedatuena kausatibokoa izan arren, zalantzarik gabe, era askotako aplikatiboak dira, batez ere Afrikako hizkuntzetan, eta baita Kalifornia, Australia eta Hego-Ameriketakoetan ere.[168]

Hymanek, bantu hizkuntzetako «hedadurez» ari dela ondoko funtzioak zerrendatzen ditu:

> This paper presents a general overview and discussion of the suffixes known as «verb extensions» in the various sub-branches of Niger-Congo. As indicated in (1), such suffixes may have a variety of functions.
>
> (1) Verb suffixes may:
> increase valence: causative, benefactive, dative, instrumental, locative, etc.
> decrease valence: passive, reciprocal, stative, middle, etc.
> (re-)orient action: reversive, directionals (goal/source, towards/from speaker), etc.
> mark aspect: pluractional, inchoative, resultative, perfective/imperfective, etc.
>
> As seen, verb extensions most frequently have what would be identified as «derivational» functions, although certain inflectional categories are sometimes implicated as well (2007: 149).

Gurean kausatiboa, aspektua (inperfektibo/perfektiboa) eta datiboa izan dira arrastoak utzi dituztenak eta horietan oinarrituaz menderen mendetan aditz-enborretan fosildurik diren hainbat egitura azter bide ditzakegu. Aplikatibo + kausatibo konbinaketak polimorfoak dira (*ar-, jar-, inar-, ihar-* eta *ur-, eroan/eraman-*ez landa); antzeko zerbait gertatzen da bantuan kausatibo + aplikatibo konbinaketa ugariekin, nahiz familia honetan bi atzizkiak guztiz egitura biziak izan, ez aspaldiko fosilak euskaraz bezala (cf. Good 2005). Bidenabar, hemen beste froga bat dugu —Schuchardtek eta nahi zutenaren aurka— adizki jokatuak (jokatugabeen irregularitateen zordun baitira) jokatugabeetarik ateratzeko, eta ez alderantziz.

168. Hego-Ameriketako hizkuntzei kasu eginaz Denis Creisselsek iradoki zidan «direkzionalak» deitzea *ja-* hasieren azpian direnei. Alabaina, Guillaumek (2016) dioskunez alde horretako hizkuntzei buruzko bibliografian deizio ugari izateaz landa (tartean «de aspecto locativo», «de aspecto de duración» eta «verbos de movimiento serializados»), euskarazkoek ez dituzte «direkzionalek» izan ditzaketen balio arruntak (ablatiboa, inesiboa, translokatiboa…), mugimendu- eta aspektu-zentzu orokor bat baizik.

Hara, adibidez, hizkuntza-familia ezberdinetan beharbada hobekien aztertua izan den aitzinbantuaren aditz-enborraren analisia, aitzineuskarazkoaren «ispilu-irudiari» kontrajarria, *urgatzi* eta **ardano* aditz zahar adibideen bitartez:

| | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|
| 1. aitzinbantua: | preverbioa— | erroa — | kaus. — | aplik. — | «V» |
| 2. aitzineuskara: | «V» — | aplik. — | kaus. — | erroa — | [atzizkia] [169] |
| | **e-* | **da-* | *ra-* | *-gotz-* | *-i* |
| | **e-* | **da-* | *ra-* | *-dan-* | *-o* |

Good-ek (2005) erakutsi legez, hasiera batean aitzinbantuan hiru aditz nagusi genituen (CVC egiturakoak, gainera), ez aditz bakarra eta bi morfema eta azalpen argirik gabeko bukaerako bokala, historikoki bezala; ondoren gramatikalizatu ziren, lehenik errotik hurbilen den kausatiboa eta geroago aplikatiboa, hots, autonomia, semantika eta tamaina galdu zuten, eta funtzio batzuk hartu: CVC-V-CVC-V-CVC-V > CVC-VC-V-CVC-V > CVCVCVC-V.[170]

Honenbestez, AEz ere, horrelako zerbait («ispilu-irudia») ahalko genuke proposatu:

1. *e-CVC-e-CVC-e-CVC; → 2. e-CVC-e-[CV-CVC]; → 3. e-[CV-CV-CVC].

Hymanek dioskunez (2011: 7) «CVC shapes such as Noni *-kEn, -nEn, -sEn, -yEn* and Lamnso *-sin, -tin, -kir* suggest that these were originally two extensions which fused (…) such a process is particularly common in Bantu when PB reciprocal **-an-* is involved (see Bostoen & Nzang-Bie 2010 for documentation in A70)». Gure *ar/jar/inar*-ekikoak ez dira hauetarik urruti gelditzen kontuan izanik 1) AEn hedadura zaharrak erroaren ezker zirela (morfologia zahar gehiena bezala), 2) morfemen forma kanoniko

169. Ohar bedi *-ki/-tsi* benetako aplikatiboak (< **-gi, *-tz-i*) erroaren eskubitara ageri direla; kokagunea aski ez balitz beren kronologia berantiarraz jabetzeko, lekukotasunek ere bermatzen dutela marka horiek gehituaz doazela. Erroaren ezkerretara bada, aldiz, *i-* marka bat (*ikasi, izeki, irion, inotsi*…) datiboari lotua.

170. Hara hizkuntza «bantoideetan» edo «peri-bantuetan» aditz-hedadurak ezagutzeko Hymanek aipatzen dituen arazoak: «(1) many Bantoid languages have few extensions, often limited to one per verb root, (2) the forms or functions of the extensions may not correspond to those in Narrow Bantu, (3) the forms may be polysemous, the semantics difficult to characterize, and the functions contradictory, (4) the roots of "formally" extended verbs often do not occur unextended, (5) such "formal extensions" pose problems of segmentation, e.g. CV-te vs CVt-e, (6) there is considerable, rather impressive variation» (2011: 2).

primarioa CV zela eta 3) VC, CVC, VCV… soilik amalgamak izan litezkeela erroak ez direnean (cf. § 4.4.3.2).[171]

**A.** Dagoeneko *-ra-* kausatibo-hedadura ezaguna genuen, nahiz historikoki *-erazo/-arazi* postposizio gardenaz ordezkatua izan. Izan da aurrizki honen jatorria ISko flexioko *-ra* atzizkian ikusi nahi izan duenik (*mendi-ra*, *egite-ra*, etab. → *e-ra-bil-i* < '*ibili arazi'), baina homofonia horrek kognatua izateko egiantzekotasun gutxi du (analogia hutsa, beraz, ez homologia):

1. bi marka horiek gramatikalizazio-sare ezberdinetakoak dira (cf. Heine & Kuteva 2002, s.u.: TO SIT / TO PUT);[172]
2. atzizki > aurrizki eraldaketa genuke isolatzailetik eranslerako bidean (edo eransletasuna gehituaz) doan hizkuntzan, diakronikoki guztiz sinestezina dena; cf. iruzkin asko behar ez duen «Change of an affix from suffix to prefix in an SOV language. This change does not seem attested and will not be discussed» (Jacques 2013: 191);
3. *-ra* atzizki oraindik biziak aspaldidanik (nork jakin noiztik?) agortua zen aurrizkia sortuko zuen, duela bi mila urte edo gehiagoz fosildutako **e-* aurrizkiaren gainetik jauzi eginaz edo; eta
4. jatorrian ez da *-ra* atzizkirik, *-r-* epentesia eta *-a* alomorfoa baizik (ik. § 4.4.3.2).

Homofoniak itsutu ezean, bistan da hipotesi hori ez dela soilik ezinezko eta egiantzekotasun urriko, baina baita premiagabe ere: *-ra-* historikora iristeko, bada alatiboa bezain on denik akitaniera-ondoko hots-aldaketei dagokienez. Izan ere, *ra-* aurrizkira iristeko mundu osoan hain ezagun den gramatikalizazio honen bidez aukera hoberik badugu, eta baten batek aski erakargarri dirudi: **don* 'PUT' (> *idoki, lohi, -do.i*, etab.) aditz zaharraren *lo(n)* alomorfo modernoagoak (cf. *lo*, *lotu*, etab.) azal litzake aurrizki hori zein *i-ro(n)* laguntzaile ezaguna ere, eta baita *-ro* atzizki modal berria ere (cf. *-to/-do* alomorfo zaharrak): ik. Heine & Kuteva (2002, s.u. PUT).

---

171. Erakargarria da Hymanen laburpeneko azken puntua ere: «contributing factors to the change and loss of extensions (and their ability to combine) are phonological (maximal size constraints), morphological (drift towards analyticity) and syntactic (change from head- to dependent-marking of arguments» (2011: 7).

172. Izatez *da-* aurrizkia dugu *-ra* atzizkiaren gramatikalizazio-sare berekoa: biak datoz **dar* 'SIT' errotik eta usukoa da aditz honek euskaraz dituen bi gramatikalizazio-bideak hartzea, batetik aspektu burutugabea ASn eta bestetik alatiboa ISn (ik. Aikhenvald 2006; cf. Lakarra 2013b). Beraz, **dar* > *da-* (GP), *da-* > *-t* / *-a* (GS), *-a* > *-r-a* (epentesia); jatorri berekoak dira kopula eta *e-ta* juntagailuaren bigarren zatiak eta leku-kasu mugagabeetako hiperkarakterizazioak zein pluraleko markak (*etxe-ta-ko, etxe-e-ta-ko*); ik. § 4.4.6.5.

**B.** Badira ez *e-tik (*-ibili, ikusi*…) baizik eta *i*-tik —edo **e-i-* amalgamatik datozen aditz batzuk ere: *igorri, ikasi, izeki, izan*…). Itxura guztien arabera noizbait aditzok datibo balio eta -jokoa zuten —cf. Oregi (1974)—, eta aurrizki zahar hau da—ISko *-i*, partizipioko *-*(n)i, *nin* ALag eta beharbada besteren bat lagun—, mundu osoko hizkuntzetako gramatikalizazio-prozesuetan hain ezaguna den 'GIVE'-ren euskal ordaina: **nin* (cf. Lakarra 2008b).

**C.** Geroztik, hirugarren hedadura bat aurkitu dugu, adizki jokatuetako *da-* bera (cf. Lakarra 2006b) jokatugabeetan.[173] Traskek (1977) *dakar, dator* eta enparatuen analisia soil-soilik «*da-* aurrizki edo laguntzaile» zela esanaz utzi zuen gaia, nahiz horrenbestez frogatua geratzen zen (bilatu bezala) SOV ez zela berreraiki zitekeen hurrenkera zaharrena. Orain, ordea, gramatikalizazio-teoriak «ALag > Aurr» jazo zela diosku, eta ez alderantzizkoa; areago, ANag > ALag ere behar dugunez, noizbait *dator, dakar* eta gainerakoetan bi aditz-erro (**dar* 'SIT' + *thor* / *khar*) jokatugabe eta «multzo-aditz asimetrikoen» erako gainerako ezaugarriekin (ik. § 4.4.6.3) izan ditugula pentsa genezake. Horrelakoetan ohi legez, alderdi bata —hierarkikoki apalena, cf. Aikhenvald (2006)— gramatikalizatu da, aspektu «burutugabea» gauzatuaz aditzean[174] eta alatiboa ISn.

Morfema hori adizki jokatuetan (*dago, dakar*, etab.) isolatu zen arren lehenik, bazen haien jatorrian diren zenbait jokatugabetan ere: *jagon, jazarri, jakin, jautsi* eta beste bi dozenatan edo, D-ko eredu konplexuagoak (**e-da-ra-*CVC) alde batera utziaz ere. Gertakari honek —gehi *–b, d, g* > *-ø-* bilakabidearen hedadurak— azaltzen du Mitxelenak *FHV*-n aipatu aditz zaharretako *j-* (*< *e-*) ondoko *-a-* edo *-au-, -ai-* bokal eta diptongoen ugaritasuna. Horrezaz landa, *la-* (< **da-*) dugu zenbait adjektibo zaharretan (*la-bur*, *la-bar*, etab.), gertakari hau ere bi kategorien (ADJren eta Aren) hasierako berdintasunaz mintzo delarik (ik. § 4.4.4).

**D.** Mitxelenaren (1977) aditz-konposatuei buruzko artikuluko pasarte bat berraztertuaz, *jardun, jaretsi, jarein* eta beste zenbaitetan —bi dozenatatik gora— ez **jar* «izenki

---

173. *Ezarri/jazarri, eutsi/jautsi* eta gainerako bikoteetan ezberdintasun fonetiko, semantiko eta geografikoak ezin har litezke halabehar hustzat, ezta euskararen barnean errazki onar litezkeen aldaketa fonetiko soiltzat ere, Mitxelenak (1977, *FHV*$^2$) inoiz egin bezala. Bidenabar, **da-* eta **da-ra*-ren bilakaerak erakusten du adizki jokatuak jokatugabeetarik datozela eta haien gainean sortuak direla: **ni-da-thor* > *nator, *ni-da-ra-dun* > *dihardut*, etab.; ik. § 4.5.

174. Trask (1977)-n honela aztertzen da —guztiz egoki, gure ustez—; De Rijkek (1992) *orain* latinetik hartu aurreko 'orainaldiko adberbio' gisa azaldu zuen; ik. Lakarra (2006b) De Rijken kritikarako.

iluna» + *-edun, -egin, -etsi* eta enparatuko aditz arinak,[175] baizik eta **da-ra-*, aurreko ahapaldietako bi aurrizkien (edo hiruren) erabileraren arrastoak dira (Lakarra prest.-1):

| | |
|---|---|
| *jardun* < * *e-da-ra-dun* | **ardano* < **e-da-ra-dan-o* |
| *inarrosi* < * *e-da-ra-non-ts-i* | *urgatzi* < **e-da-ra-gotz-i* |
| *jarrain* < **e-da-ra-din* | ... < ... |

Erro-hedadura hauek ez dira ez halabeharrezko eta ez paregabe AEko aditzean,[176] hizkuntza bantuetan edo txadikoetan eta bestetan eginkizun, jatorri eta bilakabide parekoak baitituzte «andative» edo «zuzenbidekoekin», hots, Kalifornia, Australia eta Hegoamerikako hainbat eta hainbat hizkuntzetakoen kide (ik. § 4.4.6.4).

Aditz zaharren enborreko irregularitateetarik abiatutako berreraiketak (batez ere, ezkerraldekoak) erakusten digu zeinen emankor izan litekeen EFK eta gramatikalizazioaren azterketa bateratua: Lafon eta gaur arte luzatzen den haren segizioak buruko min handirik gabe onartu poliformismoa murriztu eta, interesgarriago dena, itxurazko irregularitate eta aniztasun arrazoigabeen azpian den gramatika eta bilakabide zaharragoak azal litezke:

> Important evidence for earlier states of affairs will probably be found in small, isolated residues, as Indo-European historical linguistics has already shown. For instance, a tiny pocket of several verb forms may tell us more about an earlier stage, than large numbers of regularized or levelled forms within languages (Merlan 1979: 73 [Australiako hizkuntzen berreraiketa sintaktikoaz]).

Horien bitartez AEko egitura morfologiko eta sintaktikoaren ulerpen sakonagoa lor genezake, haren jatorri eta bilakabidea zehaztuaz. Esan gabe doa garai historikoetan aurkitzen dugunaren aurka, erroaren ezker aldean zela joko nagusia, dagoeneko Traskek (1977) markatu bezala. Bidenabar, ez bide da honekin lotura gabea Mitxelenarentzat hitzen lehen posizioa izatea berreraiketarako zailena; alderantziz, nekez izan liteke hemen ikusitakoarekin bateragarri Martineten lehendabiziko silabako azentu-proposamena (cf. § 4.5 ere).

---

175. Egilearen *FHV*-ak erakusten digu ondare zaharreko hitzetako *j-* aditz zaharretako aurrizkitik datorrela eta, beraz, *jar-* (eta horren aldaerak) ezin izan lite(z)ke 'izenki', baizik eta 'adizki', nahiz —hori bai— 'iluna' edo fosildua den aspaldidanik.

176. Beharbada ez AEZn baizik eta AEMn; bilakabidearen kronologiak berak beharrezko dituen epeez gainera, ik. ondorio bertsura eramaten gaituzten Frajzyngierren gogoetak paralelo txadikoez (2002: 179hh).

4.4.6.2. Aitzineuskararen aditza, sail itxia

Ia orokorra izan da euskararen aditz sintetikoa —hainbat eta hainbat marka eta komunztadura izan ondoren— pitzatuaz eta higatuaz joan delako ustea aspaldiko Urrezko Arotik egungo miseria honetara, auzo hizkuntzetarik hartutako egitura perifrastikoak ugalduz zihoazen heinean. 1600 arteko lekukotasunik zaharrenetan sei bat dozena aditzen adizki jokatuak lekukotzen dira eta egun horrelakoak dozena batean edo eriden litezke: *ekarri*, *etorri*, *eroan-eraman*, *egon*, *ibili*, *joan* eta beste gutxirekin. Aurrekoa osatzeko, gogora bedi dozena bat sintetikok bederen inperatiboko zenbait forma baino ez duela (*berra, diratan*) eta gainerakoetan askok ez duela bere ahalmen osoa ez txikiena ere gauzatu: *jario*-tik *dario* eta besteren bat bai, baina ***zenerizkidakeen* edo ***nentzuzkiokeen entzun*-etik (ezta askozaz errazagoak ere).

Gertakari honetan oinarriturik hainbat ikertzaileri bururatu zaio denboran zehar aski gibelerat joz gero arrunt aditz sintetiko gehiago eskuratuko genukeela eta are noizbait aditz guztiak ziratekeela sintetikoak (cf. Gómez & Sainz 1995: 238). Alabaina, segurtasun osoz baiezta liteke ustekizun hauek egiantz urrikoak direla; hasteko, munduko hizkuntza ezagun guztiek dituzte perifrasiak, gutxi edo asko, beren historien edozein unetan, baina, aldiz, horietarik hainbatek —euskara historikoak, eta seguruenik, historiaurrekoak, bezala— ez du aditz-sail irekirik, eta ezta unibertsalik ere (cf. Anderson 2006, Pawley 2006).

Céline Mounolek (2006, 2011a) erakutsi du euskarazko lau perifrasi nagusiak —(1) ANag-ø + ALag.irreala, (2) ANag-*i/-tu* + **edun/izan*,[177] (3) ANag-*t(z)en* (ik. § 4.4.6.4.2) + **edun/izan,* (4) ANag + *joan/eroan-eraman* —eta argudioa funtsean egokituko litzaieke enparatuei ere— ez direla garaikideak, ez eta guztiak nahiz gehienak latinetik edo bestetik mailegatuak ere. Bestalde, euskalaritzaren oinarrizko ezagutzetarik da *saldu* edo *batu* (nahiz *gazi* nahiz *hezi*) bezalako **e-* (> *e-, i-, j-*) gabeko aditzak ezin

177. Urgellek (2006d) argiro azaldu bezala, zalantza gutxi da *-te* dugula «inperfektiboko perifrasietako» hedadura zaharrena (ez *-tze* edo *-eta*). Trasken legea zabalduaz, *-te* soilik *-de* batetik eta gorago **-den* 'finish' batetik atera litekeelarik (ez dut *-l, -r, -s* nahiz *-z*-rekin beste aukerarik ezagutzen CVC aditz-erroa osatzeko), gramatikalizatu aurreko esanahiaren eta perifrasian hartutakoaren artean kontraesan larria nabarmen liteke gogoan izanik euskaraz FINISH-etik datozela (olultec hizkuntza mayan bezala) iragana eta 3.p.pl. (cf. Lakarra 2013b). Halere, cf. Blench-ek dioskuna kutxitikotik abiatuaz: «The iterative usage of the plural forms has led to some researchers to associate the forms with an imperfect; if an action is undertaken many times it is presumably incomplete and thus contrastive with a completive form» (2003: 17). Are interes gehiago du euskaraz bezala (cf. *-tze, -eta*) hizkuntza horietan ere iteratibo-inperfektiboaren eta plural guztien artean den lotura. Ik. § 4.4.6.5 «pluraleko aditzez».

joka zitezkeela lehen lekukotasunetarik eta ez da arrazoirik lehenagorako kontrakoa pentsatzeko.[178]

Beraz, aurre-iritziak eta ideia zaharkituak utzi eta noizbait euskara izan zitekeela perifrasigabeko hizkuntza bakarra pentsatzen jarraitu beharrean edota latinaren eta erromantzeen kutsaduraren ondorio direla historikoki ditugunak, bestela azaldu beharko ditugu aditz sintetikoen zifra hain bitxiak (beren urrian). Horrela gertatzen dira, izan ere, bai XXI. mendeko zein XVI.eko gure inguruko hizkuntzekin erkatuaz, eta seguruenik baita erkaketa beste hamar edo hogei mende atzerago eramanaz ere.

*OEH*-ra joan eta aipatu hiru letretako (*e-, i-, j-*) sarrerak begiratu eta mailegu seguruak direnak ezabatu ondoren ez zaizkigu 200 bat baino gelditzen; horietarik guztiak aditz zahar izateko hautagaitzat hartu baino lehen, beharko lirateke zenbait gogoeta egin:

1. 200ekoa ere sail itxia litzateke, oso bestelakoa gure inguruko eta urrutixeagoko hizkuntza indoeuropar, semitiko eta baita —gutxienez— uralikoetarik ere;[179]
2. fonologikoki aditz zahar konplituak izan arren *egosi, ikasi, irauli, jaso*, etab., 200 horietarik gehienak askorekin ez dira jokatu edo ez dute inongo jokoren arrastorik utzi;
3. 200 horien artean badira mordoxka (*itsusi, itzali, itzuli* edo *erosi, erre*…) ***i-tsus-i, **i-tzal-i, **i-tzul-i, **e-ros-i, **e-rre, **e-tzan* ezin analiza litezkeenak eta, beraz, erro zaharren baldintza fonotaktikoak betetzen ez dituztenak;[180]
4. Jokatu nahiz jokatugabe, zerrenda horretan gelditzen diren gehienak familiaka antolatuak dira: *ilki / jaulki / irauli, *edon / *eradon / arraun-, ifini / jafini / irabio / arbin, jin / jaio / eriden / jarraiki, *edun / jaun / eradun / jardun*… Hots, **bil, *din, *don, *dun, *gin, *gon, *khar, *khin, *khus, *non, *thor, *zan, *zun*… erroak (dozena pare bat edo) eta **i-, *da-, *ra-* edo **da-ra* aurrizki-amalgamak gehituaz osatu enborrak ditugu (cf. § 4.4.6.1); beraz, ez bide dira inoiz ere 20/30 erro diferente baino gehiago jokatu sintetikoki;

178. *Dager* 'ageri da' edo beste zenbait Arriandiagak, Elizaldek eta enparatuek duela mende bat asmatuak dira. Jolasak jarraitu du eta arestian *dizerdit* 'niri izerdia isurtzen zait' (cf. gazt. *me la suda*) eta beste ia hori bezain politak asmatu dituztenek susmatzen bide dute AEtik hona horrelakorik ez dela izan eta (garrantzitsuago eta erakargarriago dena) ezin izan zitekeela. Bidenabar, Oihenartek ere baditu *erahantzi* eta honelako batzuk.

179. Pawleyk (2006) eta bestek azken bi hamarkadetan aditzari ezarri dioten «sail itxia»-ren kontzeptua lehenago Dixonek (1977) adjektiboari egokiturik famatu egindakoaren parekoa dugu; ik. § 4.4.4.

180. Horrelatsu gertatzen da ***e-tzan*-ekin eta ***e-rabil-i* edo ***e-roan*-ekin ere, baina ez dirudi hauek inork forma horretan AEko erro soiltzat hartzen dituenik.

5. Bestela esan, zenbat aditz jokatu dituzte latinetik datozen hizkuntza erromantzeek? Ez jakin, ehundaka eta are milaka, funtsean, hizkuntza horietako aditz guztiak dira sintetikoki jokatuak, euskararen sei dozena horiek, aldiz, beharbada % 3 edo % 4 baino gutxiago (erroak zenbatuaz % 1?). Aldea erabatekoa da eta, are garrantzitsuago dena, hizkuntza horietan aditz jokatua sail irekia da eta izan da, euskarazkoa ez bezala.

Emaitzok Pawleyk (2006) eta bestek Australia, Ginea Berri, Siberia edo Ameriketako hainbat hizkuntzatan deskribatu dutenarekin bat datoz, hots, ez PERTSONA eta TAM (denbora-aspektu-modu) flexiodun aditz jokatu saila, baizik eta semantikoki oinarrizko gutxi batzuk egitura horrekin eta «converb» ugari, eta zenbait Lag-rekin konbinaturiko enparatuak:

> In northern Australia many languages have a closed class of inflecting verbs. Some languages have as few as five to a dozen such verbs, others up to about 250. Jaminjung represents a type in which most inflecting verbs function as independent verbs and have not been strongly grammaticised (Schultze-Berndt 2000). In New Guinea a number of languages of the Trans New Guinea family have between 60 and 150 inflecting verbs (…) Kalam, which has about 130 verb roots, is the best described (…) (Pawley 2006).

Aurreko guztiak AEk oso aditz sintetiko gutxiko saila zuela baieztatzera garamatza; ezaugarri honekin bateragarri dira ondoko atalean aztertu multzo-aditzena (§ 4.4.6.3) edo «soziatiboko koordinazioa / "*with*-language"» (§ 4.4.6.5) eta, azkenik, AEZren izaera isolatzailea bermatzera.

#### 4.4.6.3. Multzo-aditzak aitzineuskaraz

Akan, Gineako Golkoko kwa familiako hizkuntzarekin hasi eta hurbileko hainbat hizkuntza eta kreoleri ezarri ondoren, 1970az geroz —Afrika, Asia Hego-Ekialdeako eta Pazifikoko askorentzat, Papua-Ginea Berriko hainbatentzat eta are Australia eta Ameriketako beste zenbaitentzat ere—[181] ia mundu osoan zabaldu da «multzo-aditz»

181. Baina ez Europako batean ere Dixon (2006)-ren ondotik errepikatu izan denez. Lordek (1973), aldiz, «unibersaltzat» zuen. Hara Trask (1977)-ko iradokizuna AEz hurrengo oharrean; zorigaitzez, atzerakada handia da horko ikuspegiaz Trask (1997) eta (1998).

Arestian ezagutu dugun lan batean —Amazoniako hizkuntzez ari—guk AEZrako proposatu baino isolatzailetasun gehiagoko hizkuntzetan ere MAk izateari egiantzekotasun osoa ematen dio berezilari garrantzitsu batek: «(…) offer a gamut of serial verb constructions of different types in terms of contiguity, wordhood and composition. Serial verb constructions have been

(MA; *serial verbs*) deizioa. MA egiturak bi aditz edo gehiagoren bidez predikatu bakar bat eratzeko teknika dira; horretarako, halere, soilik dira egoki osagai horien arteko lokailuren aztarnarik ez dutenak eta argumentuak partekatzen dituztenak, ebento bakarra adieraziaz, nahiz honen barnean azpi-ebentoak izan:

| | | | |
|---|---|---|---|
| Ó | ti-gbù-rù | nwoóké | áhù. |
| He | hit-kill-TENSE | man | that |

'He beat that man to death' (lit. hit-kill)

Igbo: Lord (1975: 28, 33-4, *apud* Aikhenvald 2006: 13)

| | | | | |
|---|---|---|---|---|
| Labele | [fó | sai] | lia | ne'e! |
| NEG.can | give | exit | voice | this |

'You can't reveal this matther!

Tetun Dili: Hajek (2006: 242, *apud* Aikhenvald 2006: 16)

| | | | |
|---|---|---|---|
| Dek[1] | [wing[2] | khaw[2] | ho'ng[2]] |
| Child | run | enter | room |

'The children ran into the room'

Thai: Diller (2006: 167 *in* Aikhenvald 2006)

| | | | |
|---|---|---|---|
| Kere | [[ade | garo] | ngado] |
| 3pl:NFUT | act | be.wrong | be.solid |

'They often act wrongly'

Toqabaqita: Lichtenberk (2006: 259 *in* Aikhenvald 2006)

Beren barneko egituraren arabera MAk simetrikoak edo asimetrikoak izan litezke; lehen kasuan ez da bururik baizik eta osagai guztiak maila bereko dira, sail zabal batetik hartutakoak; beren garabide arruntena esapideak (*lexical idioms*) dira: ikusiko denez, guretzat interesgarriago diren asimetrikoetan, osagai bat «aditz txikien» sail labur eta itxitik hartua da, usuenik aditz nagusiaren norabide-, aspektu- edo balentzia-aldaketa

found in at least 50 languages (…) Serial verb constructions co-exist with numerous inflectional and derivational categories of verbs. More than half the languages have just asymmetrical serial verb constructions which provide extra grammatical specifications and tend to grammaticalize creating new grammatical morphemes, across the region. Multi-word contiguous serial verb constructions tend to be the property of mildly synthetic languages. But not exclusively so. Single-word contiguous and non-contiguous serial verbs are found in more synthetic languages. Kampa (Arawak) languages — highly synthetic with complex verb structure — have both multi-word and single word serial verbs, demonstrating the lack of dependency between serialization and morphological complexity. Incidentally, asymmetrical serial verb constructions are attested in highly synthetic languages in other parts of the world, including Australian languages (…) Totonacan of Mexico (…) and Algonquian languages» (Aikhenvald 2017: 25-26).

marka bilakatzen delarik. MA anitz duten hizkuntzetan simetrikoak nahiz asimetrikoak izan ohi dira, baina MA urrikoetan soilik asimetrikoak aurkitzen ditugu.

Bestelako aditz-egitura zenbaitekin parteka ditzaketen ezaugarriak alde batetik eta MA egitura (MAE) hauen inguruko ikerketa ugariak tradizio teoriko berezietan eta tipologia ezberdineko hizkuntzetan egin izanak, bestetik, ekarri du batek baino gehiagok «Are there any universal defining properties of serial verb constructions?» (Foley 2010, *apud* Haspelmath 2015: 2) galderari ezezkoarekin erantzutea. Alabaina, ez dirudi MAErena lillura hutsa denik eta baliagarri delarik mundu osoko ikerketa-tradizioetan, hobe dirudi modu zehatz eta eraginkorragoan erabiltzeko baliabideak jartzea; hori da Haspelmathek egin duena definizio labur eta zehatz bati hortik ateratzen diren hamar orokortasun gehituaz: «Labur, multzo-aditz deitzen da aditz askotako egitura monoklausala zeinetan ez den osagai ezberdinen lokailurik eta ezta aditzen arteko predikatu-argumentu erlaziorik ere» (Haspelmath 2015: 2).

*Haspelmathen orokortasunak*

1. MAEetan aditz guztiek dute denbora-balio bera;
2. MAEetan aditz guztiek dute modu-balio bera;
3. MAEetan aditz bakoitzak ez du denbora- edo leku-modifikatzaile berezirik;
4. MAEak intonazio bakarrarekin ahoskatzen dira, aditz soileko esaldiak bezala;
5. Kausa-ondorio erlazioa edota ebento-sekuentzia bat adierazten dutenean, MAEko aditzen ordena denbora-ikonikoa da; h.d. kausa-aditza efekto-aditza baino lehen eta ebento zaharrena adierazten duena ebento berrienari dagokiona baino lehen;
6. Pertsona-, denbora-, modu- edo negazio-markarik balitz, kokagune periferikoan litzateke: hots, lehen aditzaren aurretik edo azkenaren ondotik;
7. MAEetan aditz guztiek gutxienez argumentu bat partekatzen dute;
8. MAEak dituzten hizkuntzek subjektu bera duten MAE zenbait badute, besteak beste;
9. Subjektu ezberdineko MAEetan, bigarren aditza iragangaitza izan ohi da;
10. MAE batek ezin ditu bi agente ezberdin izan, h.d., ez-agente bat partekatuz gero, agentea ere partekatu beharra dago (2015: 16-20).

Egile honek dioskunez (2015: 20), orokortasun hauek erraxki faltsutzeko modukoak dira baina berak ez du 6. eta 7.arentzako salbuespen bakanen bat baino eriden.

Argudio eta froga ugarik diosku gure hizkuntzak MAEak zituela berreraiki genezakeen garairik zaharrenean. §4.5en ikus litezkeen argudio tipologikoez landa, dagoeneko Traskek (1977) *da-go* eta *da-kar* ez [*d-* '3. pers.' + *a* 'O.A.' + *go(n)*] eta [*d-* '3. pers.' + *a* 'O.A.' + *kar*], baizik eta [ø- '3. pers.' + *da* 'ASP. IMPERF.' + *go(n)*], eta [ø- '3. pers.' + *da* 'ASP. IMPERF.' + *khar*] analizatu behar zirela finkatu zuen, erroaren aurretik «aurrizki

edo laguntzailearekin», SOV hizkuntzez oso bestelako egiturarekin.[182] Analisi honek berarekin zekarren *nago* (< **ni-dago*) eta *nakar*-ena (< **ni-dakar*) eta, are aitzinago joaz, bai Traskek eta baita Gómezek ere (1994) soil-soilik aipatu zuten garai «inpertsonala» (**ni/hi/gu/zu… dago (de)…*), pertsona-markak atxiki aurrekoa eta, are gorago joaz, orain TAM eta inongo markarik gabeko MAE asimetriko garbietara irits gaitezke.

1977-az geroztik gramatikalizazioaren teoriaren garapenak eta sintaxi diakronikoarenak urrats gehiago eman dituzte: hasteko, Aditz Laguntzaile > Aurrizki ohiko gertakaria dela dioskute baina ez alderantzizkoa eta, beraz, Trasken *da*-ren analisi amaigabean («aurrizki edo laguntzailea») bi erantzunek ez dutela inolaz ere aukera bera (ALag > Aurr, ez **Aurr > ALag); are gehiago, ALag ere ez da kategoria primario bat, sekundarioa baizik, eta *da*-aspektu-aurrizkiak, ALag baino lehen ANag, lexiko, behar zuen izan, CVC egiturarekin, noski. Horrenbestez, *dakar* eta *dator* bezalakoetan —zehatzago, horien gramatikalizatu-aurreko **dar-kar* eta **dar-tor* formetan —gogora CVC > CV dela GP, cf. § 4.4.3.2n— bi aditz-erro jokatugabe ziren multzo-aditz asimetrikoetan legez, ohi bezala horietarik bataren (hierarkikoki apalagoaren) gramatikalizazioa datorrelarik (cf. Aikhenvald 2006), morfema berri horrek aspektu inperfektiboaren balioa hartuaz ASn eta adlatiboarena ISn.[183]

*Da- *dar* 'SIT' **e-darr-i > jarri*-ren gramatikalizazioa dugu, hots, kategoria hauek munduko hizkuntzetan izan ohi dituzten marken iturririk arruntena; bestalde, euskarazko lokatiboak (*-a/-t*) *da* horren gramatikalizazio sekundarioak dira. Beraz, *dago* [< **dar-*gon* 'SIT'-'STAY'] eta gainerakoak multzo-aditz asimetrikoak ditugu.

Gorago (§ 4.4.6.1) iruzkindu KAUSATIBOAZ eta APLIKAT.-DIREKZ.-az gainera, euskara historikoaren sintetikoetan badira lehenagoko perifrasien hondarrak, dela ALag zaharrak, dela multzo-aditz asimetriko gramatikalizatuak. Horietarik dira, beraz, PUT eta SIT-ez landara, FINISH eta GIVE-ren oinordekoak ere (§ 4.4.3.2). Beste hainbat hizkuntzatan legez, gurean ere esanahi horiek zituzten aditzok gramatikalizatu egin dira, lehendabizi MA, gero inoiz ALag eta AJokatuaren morfema lotu bilakatuaz: ASP

---

182. Trask ez zen gaiaz luze mintzatu, baina AErako horren aukera aitortzen zuen: «Be all this as it may, it can hardly be doubted that the history just sketched is correct in its essentials, and we can therefore get a glimpse of an important part of the development of the extraordinarily rich verbal morphology of Basque. We still, however, have little idea what the origin of these morphs might have been: if they were either *adpositions or serial verbs, the order of elements is absolutely out of line with the postpositional and verb-final syntax of the language*» (Trask 1977). Zorigaitzez, ideia hauek ez dira geroztik garatu, MAri dagokienez, behintzat.

183. ASP > DENB aldaketarekin, INPERF > OA bilakatu zen, —balio hori ere gordetzen zuten zenbaitek XVI. mendean (cf. Lafon 1943)—, futuro sintetiko berri bat (*-ke/-te*) eta beste perifrastiko bat (*-ko/-ren*) garatuaz.

burutuaren eta pl.-ko marka bata (**den* > *de* > *-te/-e*), datibokoa bestea (**nin* 'eman' > **ni* > *i-* Lag., *i-/-i* marka ASn eta ISn, hurrenez hurren).

Ez dira bakarrak eta beste hainbat prozesu ere multzo-aditzen gramatikalizazioarekin lotuak bide dira: UNTIL (*-raino*), konparatiboak (*ago*, *baino/baina*) mozio-aditzetatik (**gon, *non, *dar*), «TAKE» berritik (*har-tu*) sortutako *ha* 3. graduko erakuslea, *-tza(t)* prolatiboa, plurala eta haren aldaera berantiarra *-tze* (hau nominalizatzailea orobat), **din* 'to come' (> *-ti/-di* 'adj.', *-ti* 'abl./prosek.'), *-k* 'erg.' < **ga* < **gon*, etab., *-so* 'konparatibo zaharra eta urruneko ahaidetasun-marka', *oso* 'guztiz' SAY-tik (**san/so*), etab. (cf. Campbell 2013, Lakarra 2013b).

Bestalde, Afrika, Asia eta Ameriketako beste hizkuntza batzuetan eta are Australiakoetan multzo-aditzak izan litezke aditzak «hazteko» bidea, gero MA egitura horien arrastoak ezabatzen direlarik, dela lexikora igaro diren MA simetrikoen, dela —batez ere— gramatikalizazioa pairatu ohi duten asimetrikoen bitartez (cf. Aikhenvald 2006).

Hori da, esaterako, gertatu dena lakotaren postposizioekin: Pustet-ek dioskunez, maila sinkronikoan bertan hainbat lotura etimologiko aurki liteke postposizioen eta aditzen artean, 45etarik 15 homofonoak direlarik erabat eta beste askotan ezberdintasun fonologiko azalerrazak (2000: 178). Bada antzekorik —nahiz eta ASko atzizkiekin— tani hizkuntza tibeto-burmetan ere, horien monosilabismotik bisilabismorako deribaren barnean:

> Of the 100-plus derivational verb suffixes attested (…) for Galo and (…) for Mising, between 40-60% can be easily traced to lexical roots (almost always verb roots) with the same segmental phonology and underlying tone (…) Derivational verb suffixes frequently retain many of the semantic characteristics of their lexical source forms, but deploy these productively in the more generalised service of grammatical functions. (…) *There is every possibility that the pan-Tani system of derivational verb suffixes originated historically in verb serialisation* (Post 2006: 57-58; etzana nirea [JAL]).

Lakarra (2013b)-n berreraikitako atzizki guztiak (*-di/-ti, -de/-te, -i, -gi/-ki, -so, da- /-ta /-a, -t, -do/-to/-ro, za- /-z(a)*…) aditz-erroetarik datoz eta badira oraindik gehiago ere zerrendarako. Aitzineuskarak, euskara historikoak ez bezala, MA egiturak izan bide zituen, batez ere MA asimetrikoak, eta hor dute beren jatorria hainbat eta hainbat gramatikalizaziok. Datu hauek oraingoz Postek hizkuntza tanientzat erdietsitako ondorio garbien parekorik euskararentzat lortu ez arren, beste hizkuntzetako paraleloekin eta ondoren emango ditugun datu eta argudioekin elkarturik aski den adina iruditzen zaizkigu.

Azkenik, gogoan izanik hainbat hizkuntzatan multzo-aditzen eta aditz jokatu-sail itxien artean diren loturak, ulertzekoa da biak aurkitzea AEz ere, AEZn bederen.

> In some productively serializing languages, verbs form a largish but closed class—this is the case in Kalam and Kobon, both Papuan. Kalam has under 125 verbs, of which only about twenty-five are commonly used (Pawley 1993; Pawley and Lane 1998). Dumo (under B) in § 1 of Chapter 9) also has a closed set of basic verb roots, with around 100 members. There are a number of verbs with very general semantics, and these 'generic' verbs are combined together with more specific verbs to provide a precise description of an event. The wealth of SVCs in these three languages 'compensates' for having a smallish closed verb class and verbs with highly generic semantics (Aikhenvald 2006: 55).

§ 4.4.6.2ren akabuan markatu dugunez, badira oraindik beste hainbat ezaugarri garrantzitsu aditzaz landa AEZ hizkuntza isolatzaileetarik eransleetarik baino askoz hurbilago bilakatzen zutenak.

#### 4.4.6.4. Preposizioa > Copula Lokatiboa > Copula Ekuatiboa [184]

Gorago ikusi dugunez, **dar* 'SIT' > *da* bilakatu zen, burutugabeko perifrasi bezala lehen, aditz jokatuen aspektu burutugabe gero eta orainaldiko marka gisa azkenik. Gramatikalizazio-kate honen kideak ugari dira munduko hizkuntzetan (ik. Bybeeren eta bere kideen lanak), baina ez dira gutxi jatorri horretatik bertatik sortu diren beste sare batzuk, *da* copula bera ezer baino lehen. «SIT > (2) COPULA» dator Heine & Kutevaren lexikoian (lat. *sedere* > gazt. *ser* eta beste hainbat adibiderekin), CONTINUOUS eta HABITUAL direlarik ondokoak zerrendan; bestalde, LOCATIVE COPULA > (2) EQUATIVE COPULA da; hara Kenya Pidgin Swahili deritzonean:

| | | |
|---|---|---|
| Juma *iko* Nairobi | → | Juma *iko* mwalimu |
| 'Juma *be:at* Nairobi' | → | 'Juma *is* a teacher' |

Euskarazko ordainak *ama etxean da* eta *ama zuhurra da* lirateke, hurrenez hurren. Hara zer zioskun honetaz Carol Lordek duela hogeita bost urte:

> Patterns in present-day Benue-Kwa languages suggest *two general paths for grammaticalization of locative verbs. One direction is from verb to marker of incompleted aspect. Another is from verb to preposition, proceding in some cases to prefix and to zero*. Along the latter path, the preposition takes place noun objects, and may allow others such as time and manner objects as well. Depending on the semantic class of the

184. Testuan aipatu ez arren, Frajzyngierren «From preposition to equational copula» (2002: 233) oso argigarria da txadikoan prozesu osoak dituen urrats ezberdinetarako eta beste zenbait paralelotarako.

arguments present, a locative verb often allows a possession reading. In one instance, these developments appear to have cooperated with other factors to extend the preposition's use to the marking of non-topic nouns (1993: 29; etzana neurea [JAL]; cf. Aikhenvald 2006).

Traskek dagoeneko 1977an aditz-forma jokatuetakoa horrela analizatu ondoren, _da_-ren baliorik zaharrena ASP BURUTUGABEA izan zela (eta ez ORAINALDIA), erakutsi nuen aurreko lanetan (2006b, 2008b), eta baita gure hizkuntzan ere gramatikalizazio mota honek gainerako hainbat hizkuntzatako jatorri, bide eta urrats berak edo bertsuak izan dituela ere.[185]

Lordek aipatzen duen bigarren gramatikalizazio-bideari dagokionez, ISn gertatutakoari alegia, —«COPULA, LOCATIVE > (4) LOCATIVE» (Heine & Kuteva 2002: s.u.)—, euskaraz _da_ hartatik hondar aski aurkitzen ahal da ISren eskubitara:

_-ta_ leku-kasuetako mugagabeko oinarrizko forma modernoa (cf. mendi-_ta_-n/ko/rik vs etxe-_ø_-n, urte-_ø_-ko, etab.) bide da horien artean zaharrena, dagoeneko Trasken legea beteaz alomorfo berriagoarekin ahoskabe horretan ikus genezakeenez;

_-(r)at_ (< _*-(d)a-da_) ekialdean _rantz / rontz / runtz_-en kidea dena ere lokatibo-marken multzoan sartzen da, noski, -V beste hainbat atzizkitan bezala garai are modernoagoetan galdu ondoren;

_-a_ (< _*-da_) leku-izen propioekin, erakusle eta bizidunetan (_Zarautza, hona, amagana_) ez da Trasken legearen hirugarren alomorfoa baizik (-øV, cf. _-e_ pl.).

Ez dira hor amaitzen kate horren begiak: 1.p.erg./dat. _-t/da_ ere (di-a-_t_, di-_da_-zu, etab.)[186] nahiz _-ra_ (_mendira_) eta _-la_ (_mendialat_) jatorri bereko dira segurki, modaletako _-la_ (_bezala, honela_, etab.) zein aditzetako bi _-la_ ezagunak: _dela_ (SUBJ) zaharra, nahiz _datorrela_ (KONPL). Egia esan, ISko lokatibo-kate hau ez zen eskubitara hasi: _labur, labar, labain_ (< _*laban-)_ eta beste izen eta adjektibo batzuetan aurkitzen dugun _la_-horrek ezin baitu beste funtzio eta jatorririk izan. Analisi morfologiko honen alde

---

185. Hor bertan aipatzen denez, _da-_ ez dugu soilik forma jokatuetan, baizik eta baita jokatugabeetan ere: _e-zarr-i_ vs _jazarri_ (< _*e-da-zarr-i_), _ilki_ (< _*e-dul-ki_) : _jaulki_ (_*e-da-dul-ki_), etab. Hauen (eta _*da-ra-_ konbinaketen [_urgazi, ardan-, jarrain_, etab.]) azterketa (cf. § 4.4.6.1) ezinbestean lotu behar zaio Lord, Aikhenvald eta gainerakoek aditz lokatiboen gramatikalizazioaz erakutsitakoari.

186. Ohar bedi «LOCATIVE > AGENT» bilakabidea dela lehena Heine & Kutevaren lexikoian. Honek balio bide du 2. pertsonako _-ga/-a_-rentzat ere bere lokatibo izaera zaharra begi-bistakoa baitugu toponimian; ikusirik zein eratako aditzak izan ohi diren horrelako marken oinarrian, ez bide litzateke ausartegi _gon_ erroa proposatzea jatorritzat. Ez dut aukerarik gertakari hauen ondorio guztiak hemen ateratzeko, adib., _*-da_ '1.p.' eta _*-ga_ '2.p.'-ren zergatia.

—eta, ondorioz, baita AURRIZKI > ATZIZKI aldaketaren alde ere— badira bi argudio, morfofonologikoa bata eta fonologikoa bestea, laburki aipatzea merezi dutenak: erro monosilabikoaren teoriak CVCVC egiturak ondare zaharrean CV-CVC azaltzen ditu eta, horren berme, zenbait CVC (*sa-bel, sa-min*, etab.) bestelako kokaguneetan (*har-bel, beltz, *bin-i* [> *mihi*], **bortz-bin* [> *ozpin*]) aurkitzen ditugu. Ez, aldiz, *la-* hori: eskubian (beranduago, historikoki) aurkitzen direnez landa, ez dugu **la* errorik (bere egitura ez da iristen beharrezko CVCra ere) eta hor, beraz, flexio-marka genuen, eta ez erro: preposizio eta aurrizki lokatiboa izan genuen atzizki baino lehen.

Halaber, aurreko *l-* (> *-r-*) horiek beste alde batetik ere ematen dute aldaketa morfosintaktikoa larriaren berri; izan ere, *d* > *l* aldaketak testuinguru jakina du hizkuntzaren historian (hitz hasiera, ez besterik) eta, horrenbestez, azken batean copulatik eta **dar*-etik datozen lokatibook soilik kokagune horretan pairatu ahal izan zuten delako aldaketa hori (AEM baino lehen, beraz), preposizio bezala, inolaz ere ez atzizki edo postposizio gisa.[187]

4.4.6.5. Plural-aditzez

*Eta*-k baditu hainbat balio. Hasteko, §4.4.6.6n aipatuko den juntagailuaz landa, toponimian lekua eta plurala adierazten ditu (*Harrieta* 'harriak diren tokia', *Hobieta* 'hobiak diren tokia'…). Egia da Schuchardtekin hasita izan dela atzizki hau latin-erromantzetik ekarri nahi izan duenik, erromantzezko *Robledo, Manzaneda* eta antzekoekin erkatuaz (cf., horren arazo zenbaitez, Mitxelena *FHV*-n); alabaina, uste horrek egiantzekotasun gutxi du §3.6n laburtu Mitxelenaren (1971a) analisiaren ondotik:

a. *-eta* (gehi *-aga*) ez dira euskaraz deribazio-atzizki arrunten antzera portatzen hitz-eraketaren erregelei dagokienez (cf. goiko *harrieta* (***harreta, **harraga*) : *hardui*, *Hartzubi*, etab.);
b. *-eta* (gehi *-aga*) ez zaizkie izenei edo adjektiboei lotzen eratorpen-atzizkiak bezala: cf. Zubi-*eta*, [Zubi-zahar]-*eta* (ez **Zubi-*eta* zahar, ezta **Zubi-*eta* zahar-*eta*); aldiz, *Hardui* eta *Hardui handi*, ez ***Harri handi-dui* edo ***Hardui handidui* eta,

187. Gogora Mitxelenak *d-* bere sisteman soilik orainaldiko aditzentzat (?), mailegu eta fonosinbolismoei egokitu ziela, ez ondare zaharreko izen, adjektibo, partikula eta gainerakoei, are gutxiago bere morfologian tokirik ez zuten preposizioei eta aurrizkiei (cf. *la*-bur). Hau da De Rijken «*Nunc* vasconice» famatuko arazo bat (cf. Lakarra 2006b), aldaketa morfologikoaren zuzenbidea (ASP > DENB ala DENB > ASP) eta dagoeneko Lafonek (1944) aipatu xvi. mendeko hainbat lekukotasunen balio zehatzaz landa.

> ez da noski antzekorik *-mentu, -tate, -zio* ez gainerakoekin (ezta ondare zaharreko *-tasun, -garri, -kor* eta enparatuekin ere).
>
> Mitxelenak markatu bezala, *-eta* eta *-aga* ez dira deribazio-atzizki, flexio-atzizki baizik eta, gainera, IS osoari atxikitzen zaizkio, haiek ez bezala. *-eta*-ren latin-erromantzeekikoa ez da homofonia txar bat baino, baina aitortu behar da Schuchardtek ez zuela gehiagorik bilatzen, Euskal Herria lege fonetikorik gabeko paradisua baitzen harentzat berak aitortu legez (ik. Lakarra 2003; goian § 3.3); alabaina, balirudike bere ondorengoak ez direla hainbesterekin asetzeko prest eta asmo jaso eta goitiarragoak dituztela.

Aurrekoa aski ez balitz, bistan da izatez *heta* dela «atzizki» (egiatan amalgama: CV + CV, cf. § 4.4.3.2) honen forma zaharra, bai *Amezketa* bezalakoek salatzen duten *S + h > Sk fortizioagatik eta baita Erdi Aroko <heta> ugariengatik ere: cf. *Arteheta, Muruheta, Oçaheta*, etab. (Manterola 2015: 212). Ez da, noski, *h-* hori latinetik edo erromantzetik azaltzerik (jende ezberdinak ahalegin handiak egin baditu ere) eta —*eta*-ren funtzio ezberdin ugarien azterketa ez-atomistaren abantailez landa (ik. § 4.4.6.6 ere)— argudio erantsia dugu (ez azkena, agian) «azalpen-bide» honen aurka.

Honaino iritsi ondoren, Schuchardten (eta ondokoen) baieztapenak, aspalditik (duela ia mende erdi) ezinezko edo egiantz handirik gabeko izateaz landa, ez du ezer azaltzen eta bai asko estaltzen eta oztopatzen euskal morfosintaxi zaharraz (haien ardura nagusia ere ez delako, beharbada); esaterako, orain arte azaldu ez den halabeharra edo litzateke *eta*-1 'aditz-izen/ekintza' : *eta*-2 'izen pl.' bikoiztasuna,[188] *-eta* / *-ta* 'pl.' / 'indeterm.' edota morfema horiezaz landa, aditz zaharretan, **eze* ukapenean eta enparauetan errepikatutako *-e-* (ik. § 4.4.5.2).

Bikoiztasun bertsua dugu *eta*-ren kideetan ere eta gertakari hau ere ez doa ongi bide desbideratu horretatik jo nahi duenarentzat:

A. [**den*] : *-te*-1 (egi-*te*-n) : elur-*te* : *-te*-ren taldean kokatzen da, orobat, aditz jokatuetako (ABS/ERG) *-de* / *-te* / *-e* pl.
B. [**zan*] : *-tze*-1 (ekar-*tze*-n) : *-tze*-2 (sagar-*tze*) : adizkietako (NOM/OBJ.) *-z(a)* (*dagoz, dakartza*), etab. [alomorfo zaharra]; *-tze -a*-ren erorketa eta *-e*-ren berranalisitik dator (cf. *Albistur, Egiluz* alde batetik eta *atze, aurre*, etab. bestetik).

188. *-eta* = «aditz pluralgile» analisiak indartu egiten du aurreko atalean eman «*eta* juntagailua < copula» analisia gramatikalizazioaren alderdiari dagokionez, *eta* guztiek eskatzen baitute *e-* preposizioa (< *he*; cf. § 4.4.5.2) eta Trasken legea (ik. § 4.4.3.2) formaren aldetik. Ez dirudi horien arteko «antza» halabehar hutstzat har litekeenik, baina gertakariok azaltzeko lehendabiziko egitekoa Traskek «bongo-bongo hurbilketa» deitutakotik urruntzea bide litzateke.

Euskarazko datu hauetan ez da inongo halabeharrik, noski, baizik eta beste hizkuntza batzuetan ere gramatikalizazioaren fenomeno unibertsalaren barnean aurkitzen ditugun «plural-aditzak» (*plura(ctiona)l verbs*) deitutakoen kideak:

> Pluractionals are characterized as markers that «attach to the verb to indicate a multiplicity of actions, whether involving *multiple participants, times or locations*» (Laserohn 1995: 240, *apud* Laca 2004: 88; etzana neurea [JAL]).[189]

Hau da, **dar* 'sit'-etik sortu copularen alomorfo berritik (*ta*), **zan*-etik eta **den* 'finish'-etik sortutako pluralak ditugu guztiak, noiz aditz ekintzari, noiz aditzeko komunztadura-markei (ergatibokoari, datibokoari, nor-subjektuari, nor-objektuari), noiz aditz-izenei dagokielarik.

Euskararen barnean, *-te* iteratibo zaharrena (ik. Urgell 2006d-ko froga filologiko konplituak) izan liteke, beharbada, zailtasunik gehien eman diezaigukeena, iteratiboa aspektu inperfektiboarekin berdintzen badugu ohi bezala: izan ere **den* 'finish' perfektibo-markaren jatorri ia unibertsala dugularik (cf. Lakarra 2013b), iteratiboko *-te*-n Trasken legea antzemanaz **de* batera iritsiko ginateke eta, beraz, euskaraz —olultecean (cf. Zavala 2006) eta beste hizkuntza batzuetan legez— inperfektiboa eta perfektiboa biak erro beretik sortutzat azalduko. Alabaina, ohartzekoa litzateke perfektiboaren gramatikalizazio-bide jakin bateko lehen urratsa —aditz horren gramatikalizaziorik hedatuena— den bitartean, inperfektiboa, beste bide ezberdin —eta ez hain hedatu— bateko bigarrenkaria dugula, pluraleko gramatikalizazioa tarteko:

1. **den* 'finish' → A. *de* (> *-e*) 'perfektiboa';
2. **den* 'finish' → B. *de* (> *-te, -e*) 'plurala'; → C. *-te* (alomorfo sekundarioa) 'ebento plurala', 'iteratiboa' -→ inperfektiboa.

Fenomeno hau ere ez da ezezaguna beste hizkuntza batzuetan: «The iterative usage of the plural forms has led some researchers to associate the forms with an imperfect; if an action is undertaken many times it is presumably incomplete and thus contrastive with a completive form» (Blench 2003: 17).

---

189. Beste askotan bezala, Frajzyngierrek txadikozko paralelo interesgarriak dakarzkigu (2002: 43hh): «One of the characteristic features in a number of Chadic languages is the identity of markers of nominal plural with the markers that indicate the frequentative, intensive forms of the verb and at the same time, often, plurality of object. (…) The number of languages in which the markers of nominal and verbal plurality are similar and the number of morphemes involved make any argument against accidental identity superfluous» (43). Gure kasuan, itxaron litekeen bezala —konkordantzia gehiago baita—, aditz jokatuetan fenomeno hau ez da bakarrik objektuetara mugatzen.

#### 4.4.6.6. *Eta* JUNTAGAILUAZ

Historikoki koordinazio-juntagailu arruntena (*eta*) dela eta —*-kin*/*-gaz*-ez ik. § 4.4.6.8-4.4.6.9— gramatikalizazio-ikerketek eskaintzen digute zer bila:

1. Bide bat, beharbada ezagunena, DEMONSTRATIVE > CONJUNCTION litzateke (cf. Heine & Kuteva 2002); beraz, euskarazko *-heta* (ik. honetaz Julen Manterolaren lanak) izan ahalko litzateke *eta*-ren jatorria, noski. Alabaina, esan gabe doa gorago joaz *heta* horren goragoko jatorria ere beharko litzatekeela aztertu, CVCV baitugu; aditza izan edo ez *eta* (cf. § 4.4.5.2 aitzinlokatiboaz), *-ta* hori nekez berezi ahalko genuke *he-* (adberbio-preposiziotik) eta **da*-lokatibo kopulatik (gehi *-ta*-lokatibo-preposiziotik).[190] Bestalde, zehatzago begiratuaz gauzak «[connectives] are frequently formed from a pronominal demonstrative *and* some other element (e.g., an adverb or adposition) that indicates the semantic relationship between the conjoined propositions» (Diessel 1999 *apud* Heine & Kuteva 2002: 107).
2. Bada beste bide bat gutxienez (Heine & Kuteva 2002 orobat): hots, COPULA > (3) CONSECUTIVE ere. Vai hizkuntzan adibidez «á mu 'it was' > ámu, ámo 'and', 'then', continuity marker in a narrative discourse»; orobat kxoeraz «*na* 'be' + *ko* subordination marker (lit.: 'being thus') > *nákò* 'and', conjunction» (*ib*.).

   Bigarren honetan (**da* > *eta*) *e-* hori azaldu beharko litzateke eta baita zergatik -D- > -T- bilakatu denere; egia esan, bi kontuak erdiets litezke aski merke, batez ere bigarrena, dagoeneko hainbatetan erabili dugun Trasken legearen laguntzaz. *e-* horri dagokionez —kxoerako subordinazio-markaren parekoaz, alegia—, oraintsu arte ez genekien nola azaldu genitibo zaharreko *-e*-tik abiatuaz; orain, ordea, aditz zaharrek hartu ohi zuten eta aitzinlokatiboarekin lot genezakeen aurrizkia dugu (§ 4.4.5.2) eta *edo*-n gehi beste zenbait partikula gramatikaletan —**eze* (> *ez, ze-*), *ezer, ezen, ezik*, etab.— errepikatzen da, gainera.

   Izan ere, Stassenek eta gainerakoek usu markatzen dute koord. juntagailuak MAetarik etorri ohi direla; hara Brown eta Dryer-ek dioskutena walman hizkuntza australiarraz:

   > (I)t seems most likely that these verbs did originally have a meaning of 'be with' (…) In other words, the possibility of separating the *and*-verbs from their subjects could be explained if these verbs originally occurred only in serial verb constructions

190. Cf. «If we have to postulate that the same preposition occurred in constructions meaning 'at', 'to' and 'from', then the preposition could not have the separate meanings 'at', 'to' and 'from' but rather had a general locative meaning indicating that the following argument is a locative phrase» (Frajzyngier 2002: 169).

> with the meaning 'be with'; under this scenario, the possibility of their occurring in serial verb constructions has survived, despite the fact that these verbs now mean 'and' (2008: 562).

MAetarik sortuak izatea, bidenabar, ongi ezkontzen da *eta*-ren erabilerarekin: hasteko, egitura simetrikoetan aurkitzen dugu (komitatibo-juntagailuak ez bezala) eta hortik pluraleko komunztadura (*aita eta umea datoz* / *aitarekin umea dator*, etab.); bestalde, nahiz ISak, nahiz ASak, nahiz esaldiak lotzeko erabili izan da baina badirudi AS eta esaldi osoak zirela bere lehen esparrua, ISra gero hedatu zelarik WITH-hizkuntza izatetik AND-hizkuntza izatera igarotzean (§ 4.4.6.5). Ez dakigu, noski, noiz gertatu zen hau, baina WITH-hizkuntzen egituraz dakigunak ez eze eta MA egituretarik etorri izanak biek froga sendo erantsiak ematen dizkigute esateko euskara ez dela izan «betidanik» *eta*-juntagailudun eta komunztadura aberatseko hizkuntza.

Are gehiago, nahi genukeen guztia zehaztea ezinezko izan arren, esango nuke Frajzyngierren ondoko pasarteak *eta*-ren sorrera tipologia-eredu zaharraren aldaketa larriekin lotzera garamatzala:

> The purpose of this paper is to show that there are at least two necessary conditions for the serial verb constructions to emerge in language: The first condition is that there must be necessary functional prerequisits. These functional prerequisits are: for the SVCs that perform the 'function' of case marking the language may not have inflectional devices to mark the case and if it has adpositions these may not perform the same function as the ones performed by the SVC. If the SVC perform the function of directional markers, then the language will not have the adpositions that have the directional markers, then the language will not have the adpositions (ex. Chadic).
>
> The above conditions, while they provide a motivation for the emergence of some devices to mark the semantic functions, do not yet force emergence of the SVCs. In order for that to happen yet another condition must be met: language may not have a coordinated conjuction, equivalent of IE 'and'. This is a necessary prerequisite for the use of two finite forms of verbs in a sequence. In languages that do have coordinated conjunction the emergence of VV is disallowed. Instead one has to use either V-Conj-V or V SUBORDINATOR V (e.g. Russian). The evidence in support of my hypothesis is provided by the fact that in all languages that have the SVC there is no coordinate conjunction for clauses (This actually has to be shown!) (Frajzyngier argitaragabea: 1).[191]

191. Ez dut uste lat. *et* > eusk. *eta* «euskalari guztiek» sinisten dutenik Torrens-ek (2014, 2015) dioen bezala eta esango nuke, gainera, sinesmen falta hori aspaldikoa eta oinarritua dela. Torrensen hurbilketa okerra izateaz kanpo ez da oso edo, hobe, osoa ez izanik ezin izan egokia. Hots, ez du ezer esatekorik euskararen morfosintaxi historikoan diren gainerako *eta* morfema eta partikulez

### 4.4.6.7. Edo

Funtzionalki (koordinatzaileak) eta formalki (e-CV)[192] kide hertsiak ditugu *eta* eta *edo*. Honen gramatikalizazioaz —«coordinating interclausal», zehatzago «disjunctive connectives» direlakoen jatorriez—, Ramat-ek eta Mauri-k ondoko iturri ezagunak ematen dizkigute, hainbat kizkuntzatako paraleloez horniturik: «(1) distal meaning 'that, other', (2) interrogative particle, (3) free choice verbs, (4) dubitative particles 'perhaps', (5) negative particles, (6) denied conditional clause 'if not', 'if it is not so'» (2011: 660).

Guri hirugarren sailekoak egokitzen zaizkigu: egileek latineko (*vel*) eta erromantzeko (fr. *soit*) kideak aipatzen dituzte —bigarrena bederen, laburbehar hutsez— eta beste hainbat erants bide dakizkieke. Euskaraz *edo/ala* bereizkuntzari, nolanahi ere, ez zaio arrotz egiten dagoeneko Varronek *vel/aut* bikotearentzat zekarrena: «*vel* conligatio quidem est disiunctiua, sed non [ex] earum rerum quae natura disiuncta sunt, in quibus *aut* coniunctione rectius utimur, ut "aut dies aut nox", sed earum quae non sunt contra, e quibus quae eligatur nihil interest (…)» (*apud* Ernout-Meillet s.u.). Egileok dioskutenez, *uel uolo*:-ren familiako dugu (nahiz forma-zailtasunen bat izan) eta hizkuntza italikoetan ere antzeko eraketak ditugu, erro ezberdinekin.

Euskaraz *nahiz… nahiz…* begi-bistako kidea dugu eta *bai* < **ba(da)di*-tik badator dirudien bezala, *bai… bai…* egituran are kide hertsiagoa (aditza, nahiz jokatua) genuke. *Edo* aditz-ohi juntagailu bilakatuarentzat ez da ahaztekoa *OEH*-ko lekukotasuna: bertan dakusgunez «*edo… edo…*» hizkuntzaren historia nahiz geografia osoan erabili izan da (gehiago, seguruenik, lehen garaietan modernoagoetan baino), eta dagoeneko badira «*edo dela… edo (dela)…*» indartuak Leizarraga, bi Etxeberriak nahiz *Itsasoko Nabigationeko Liburua*-n.[193]

---

(ik. aurreko atalak, esaterako), latinez edo erromantzez horien «kideek» ez baitute inongo loturarik ez sinkronikoki eta ez diakronikoki. Alabaina, ez dira horregatik gauzak aldatzen euskaraz, eta hemen *(h)eta* hasieran morfema bakar bat zen (amalgama bakar bat, hobe), egitura ezberdinetan gramatikalizatua eta ez beren artean loturarik gabeko hainbat mailegu, Schuchardtez geroztiko hurbilketa atomistak gorabehera. Ik., orobat, ondoko atalean *edo*-rekikoak.

192. Ik. goraxeago *e-* aditz-aurrizkiaz eta § 4.4.3.2 erroen gramatikalizazio primarioaz (CVC > CV) eta Trasken legeaz (DV > TV / V).

193. Ez dut hemen astirik (eta ezta beharrik ere) luzeago aritzeko Torrens-ek egin marka honi buruzko (lat. *et aut* > eusk. *edo*) egiantzekotasun gutxiko proposamenaren inguruan: zail da onartzen Valpuestako kartularioan ia hapax baten gisan lekukotu eta bere hurbileneko erdaran ere aztarnarik utzi ez duen forma bat euskararen garai eta dialekto guztietako juntagailu bilakatzea, alegia. Bestalde, aurreko ataletan erakutsi uste dut analisi ez-atomista baten behar eta interesa «gutxi gorabeherako» hoskidetasun/liluren atarramendu eskasaren aurka. Ez dut ikusten era honetako lanek zertarako balio lezaketen baina euskararen morfosintaxi diakronikoa argitzeko ez bederen.

### 4.4.6.8. (Aitzin)euskara *-kin* hizkuntza

> La sorprendente construcción del v.1. (*Ene veguiacaz vioçeen artean* «entre mis ojos y mi corazón», lit. «con mis ojos entre el corazón») encuentra un paralelo preciso en una fórmula del Confiteor, antigua sin duda alguna, que nos han transmitido los catecismos vizcaínos de los siglos xvi y xvii: *Iaundone Periagaz san Pablori* «a San Pedro y San Pablo». Mucho más tarde, en el ms. de Ochandiano, p. 5. Se lee: *Zugaz nire artean*, «entre tú y yo» (*TAV*, 123).

Egitura honen azalpenez aipurik ez zen gramatika eta antzekoetan 1983an —egungo egunean ere ez da askoz gehiago: cf. Hualde & Ortiz de Urbina (2003), EGLU, De Rijk (2008) ezagunenak baino ez aipatzearren— eta paraleloak bilatzen saiatu nintzen testu eta kantu zaharretan. Uzta aski ona izan zen:

(1) Gomiz Gonsalu<c>h bertan çan, / *beragaz Presebalen caltean* / Joanicoc eta beste ascoc / eudela parte bertan (Arrasateko Erreketa
(2) *Oguiagaz hura oragaz heroen elicatura*, «Pan con agua, mantenimiento de loco y mastín» (*RS* 1596)
(3) Gloria Patri / *Biz gloria Aitearekin semearentzat* / Biz gloria espiritu santuarentzat… (Miserere gipuzkoarra)
(4) *Gamboarraquin / oñaztarroc conforme / Vizcaitican vere / acompañacen debe* (Bretañako Kanta)
(5) *Peru Xauna derechan vategas vere osseyñ Alonsoen artean* «entre un hidalgo llamado Don Pedro y su criado Alonso» (Mikoleta)

Beste hainbat ere badaude: 1705eko Gabon-Kantan (G), Barrutiaren *Actoa*-n, Hiztegi Hirukoitzean, Oikiako dotrinan (1755), Limako bertsoetan (1761), Gandararen poesia batean (1768), Larizen dotrinan (1773), eta De la Quadraren *Exercicioa*-n (1784) bederen (ik. Bilbao 1997-98), hauetarik batzuk —batez ere azkenak— fosilduak (*X-ekin Ygen arte*), Mitxelenak goian aipatu Otxandioko eskuizkribukoa bezala. Dozenaka adibide dira, ordea, Iztuetaren lanetan, bere arrazoi estilistiko pertsonalengatik, eta baita mordo bat Arruerengan Mujikak (1991) erakutsi zuen bezala.

1983ko lan horretan Bko eta Gko kantu zaharretako pasarteekin batera, —Ama, gauzorigaitik / ez egin negarrik, / ezteutsudala emongo / errementaririk, / Errementari baino *oba da zesteru / lepoa bete ailaragaz / altzo bete diru*; Oi bart! Oi bart! / usapal bi ta eper bat / yanaritzat, yanaritzat / *iru atxorekin amabost agurek*—, baziren Azkuek Nafarroa Garaian (Etxalarren, Baraibarren, Urdiainen, Lekunberrin, Elizondon, Aezkoan…) jasoak ere:

Neure alaba Miarrez / zer dun orrela nigarrez? / *Ire yaunziak eginik tziauden / urrearekin zilarrez*

Juan Martin de Aborreta / da Erroko semea / aitaren seme maitea. / Gizonak eztezala desira / nik izan dudan suertea: / *galdurikan utzi ditut / lau aurrekin andrea*. / Neke da erremediatzea!

Iturri atan bataiatu zen / Kristo Erredentorea, / *Kristo Erredentorearekin / guztien Salbadorea*

Orai guraxe badateke / oi! nere Semea / —Gontarik eztiakezut, / Birjina Maria, / *gontan pasatu bear dut / pasionea, / pasionearekin eriotzea, / eriotzearekin mundu guzia*.

Horrenbestez, egiturari hedadura eta zahartasuna aitortu beharra genion, nahiz oraingoz soilik Hegoaldean lekukotu. 2004an Lazarragaren eskuizkribua ezagutzean, egitura hau Arabako euskaran beste inon baino ugariago agertu zitzaigun:

1142v *Çurequin ene aitasuna* / horrela auçi jaquinic

1154r Bioen contra probancea / clarua dago çiertu / *Doridogaz Silueroren beruac* / çerren ez even sinistu

1165v Ynoen bildurbaga / arren esaçu / çeure pensamentuan / cer daducaçun / *Çurequin ene faltaoc* / estalico det; / beti pensamentuan / galçaen çaytuez.

Genoaco condaduan / *Pisaquin Florencia* / *Pullalequin Ferrera* baino / Obeago da Venescia / Munduac claramentean daq[u]i / Çurça dana Ciçilia / .] ostaenez *lecu on dira* / *Toscanarequin Lonbardia,* / Aec gustiac bayno bere / Obeago ene amore onesçia.

Testu honetan, gainera, lehenago markatu gabeko egituraren beste aldaera bat ere bazen:

1169r Cerua eta yçarrac bere / oyta çebitez yxildu; / *ysasoorrec horbe guztiaz* / beti çaagui laudatu.

1169v Morroe galant estiraduac / oy defendidu naaguiçu / oy *Gaztelaco Erregue jauna* / *Erreguiagaz ycasu* / ceure cortean dama ederric / nola bapere ez doçun.

1175v Arren choriac exilic çaoz / badoçu miramenturic / *mundu guztia ysasoagaz / nançuçu,* çaoz gueldiric.[194]

2008an, azkenik, *Urthubiako Alhaba* baladan aurkitzen genuen 28-29: *Jauna, othoi indazu amaren bizia; / amaren biziarekin aitaren libertatia*; Vinsonek balada horren jatortasunaz izan zitzakeen zalantzak —dagoeneko argudio historiko eta estilistikoekin

194. Eredu honen aldaerak aurkitu izan ditu Manu Padillak 18-19. mendeko zenbait testutan (*Charlemagne*, beste pastoral eta astolasterrak gehi Etxahun tartean); Zuberoatik kanpo *Kadet eta Bettiriño*, Le Dauphineko gutunak edo Goihetxerengan.

A. Cidek eta X. Kaltzakortak, hurrenez hurren, oso apalduak (ik. 2008ko *ASJU*)— egitura honek uxatzen zituen eta XVI. mendearen erdialdean kokatzen testua, kantatu gertakarien garaikide.

Carol Lordek «Serial verbs in transition» artikulu klasikoan (1973) hara nolako ondorioak ateratzen zituen «from comitative verb to preposition and beyond» deitu atalean berak aztertu afrikar hizkuntzez:

> Recapitulating, then: evidence suggests that Comitative verbs in serial constructions lost verb status and became prepositions, accepting a range of objects and thereby taking on Instrumental and Manner as well as Comitative semantics. The Comitative preposition later developed into a noun phrase component with conjunction-like meaning; in other contexts the preposition lost its object and became an adverbial particle (Lord 1973: 290; oso antzera txinerazko *lau* partikulaz Lai-k 2003: 533).

Geroztik bibliografia ugari zen ISko soziatiboko-koordinazioaren gramatikalizazioaz; horren barnean aipagarri da L. Stassen-en «*And*-languages and *with*-languages» (*Linguistic Typology* 2000, 1-54). Diakronistarentzat hari asko da Stassenen lanean eta hor islatu datu eta analisietan baina, labur, ezin argiago ikus genezake euskarak (beste hainbat hizkuntzak bezala) «*eta*-hizkuntzarantz» izan duen deriba antzinako «*-kin*/*-gaz*-hizkuntza»-tik.[195] Egileak dioskunez, munduko hizkuntzen artean *eta*-hizkuntzak dira gehienak baina zenbait eremutan[196] badira «estrategia komitatiboa» nagusi dutenak ere:

| | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|
| mi | pahnih | ka | hnêna | lo-va | an | kal |
| man | two | 1SG | with | field-to | 3PL | go |

‘The two men and I went to the field / The two men went to the field with me’
[Lushai (Sino-Tibetara, Tibeto-Burma); (Lorrain & Savidge 1898: 33, *apud* Stassen 2000: 22)]

| | | | |
|---|---|---|---|
| Kwesi | nye | Amba | a-ba |
| Kwesi | with | Amba | PST-come |

‘Kwesi and Amba have come / Kwesi has come with Amba’
[Akan (Niger-Kordofanian, Bantoid); (Taylor 1985: 58; *apud* Stassen 2000: 22)]

Hara Stassenen definizioak:

---

195. Euskalariek emandako datuez fidaturik Stassenek —ehunka hizkuntzaren gainean egindako bere sailkapenean, —euskara «*eta*-hizkuntza» garbitzat zuen, iturriek «*kin*-hizkuntza» ezaugarri ez adibiderik ez aipatzean.

196. Mundu mailako Stassenen mapa orokorretarako ik. § 5en akabuan.

*Coordinate Strategy*: NPs have same structural rank; Unique coordinate particle; NPs form a constituent; Plural/dual agreement on verbs.
*Comitative Strategy*: NPs differ in structural rank; Unique comitative marquer; NPs do not form a constituent; Singular agreement on verbs.

Eta ondorioa: «As a general conclusion, we can state that the relatively low frequency of "pure" WITH-languages is the result of an apparent "drive" in languages towards the creation of a coordinate structure, in which the two NPs are balanced in rank» (Stassen 2000: 38). Hots, usuenik, *kin*-hizkuntzak beren aitzineko «garbitasun» tipologikotik urrunduaz, «*eta*-hizkuntzetara» hurbiltzen dira (ez, aldiz, kontrara), dela —euskarazko adibide gehienak legez— aditz-komunztadura pluralean eginaz edo bestelako aldaketaren baten bidez. Gainera, lehengo *kin*-koordinatzailearen ondoan *eta*-koordinazioak (soziatiboarekin bat ez datozenak) sortu ohi dira hainbat hizkuntzatan, Bahasa Indonesia, vietnameraz, Asia Ipar-Ekialdean nahiz Ipar eta Erdialdeko Amerikan… eta baita euskararen historiaurrean, guztiz nagusi baitzen lehen lekukoetarako.

Euskarazko arkaismo urri baten adibide bitxiak tipologikoki azaltzeaz gainetiko aukera ematen digute Stassenen bi orokortasunek:

Tendencies in the Casedness—*and/with* correlation:
If a language is Cased, it will tend to have *and*-status.
If a language has *with*-status, it will tend to be NonCased (2000: 44).
Tendencies in the Tensednes—*and/with* correlation:
If a languag is Tensed, it will tend to have *and*-status.
If a language has *with*-status, it will tend to be nonTensed (2000: 46).[197]

Alegia, euskara arkaikoan eta are geroago oraindik *kin*-hizkuntzaren aztarnak gordetzen zirelarik, euskararen historiaurrean, —ez jakin noiz arte—, egitura nagusia ez bide zen eransle izango, isolatzaile baizik.[198]

---

197. Horiezaz landa Stassenek markatzen duenez, *kin*-hizkuntzetan adjektiboak ez dira kategoria berezi eta sail zabal bat, aditzaren azpisaila baizik (cf. § 4.4.4); *eta*-koordinazioen jatorriak oso ezberdinak dira; ik. § 4.4.6.6.

198. Bada Frajzyngierren proposamen bat —§ 4.4.6.6n aipatua— hizkuntzek MA egiturak izateko preposizioak eta bestelako ISko kasu-markak ez izateaz landa, IE hizkuntzetako «and» juntagailuaren baliokiderik ere ez luketela izan behar esanaz. Gero Stassenek «-*kin*-hizkuntza» izatearekin ISko kasu-markak nahiz ASko komunztadurak baztertu dituelarik, euskara historikoarenaz oso bestelako tipologia iragartzen digu AEko garai zaharrenetarako, bederen.

### 4.4.6.9. Komitatiboa berreraikitzeaz haboro

Izatez, Mitxelenari hain bitxi egiten zitzaion (eta euskararen aldaketa tipologikoaren ikerketarako garrantzi berebizikoa izan den) komitatiboaren azterketak egin lezake argirik euskararen morfologia diakronikoan, Lord (1973), Chappell, Peyraube eta Wu-ren (2011), Arkhipov-en (2009) eta besteren lanetan bai baita komitatiboaren gramatikalizazioaren inguruan AE eta euskararen historiaurrearen berreraiketarako ikergai haboro: aditz komitatiboa (*ekhin*), moduzko adberbialen gramatikalizazioa (*-ki*), denborazkoena (*ostegunarekin* 'ostegunez') eta, baita beharbada —komitatiboaren eta datiboaren arteko erlazioaren bitartez— Traskek «dative flag» deitutakoena ere (dator-*ki*-gu, etab.).

Ez da, alabaina, komitatiboaren azterketak gordetzen bide duen guztia. Hasteko, gainerako kasu-marka gehienetan legez, ez luke harritzeko izan behar soziatiboaren oinarrizko marka (*-ki*) [199] aditz zaharren baterik etortzea; [200] hori da, bestalde, hainbat hizkuntzatako «aditz komitatiboekin» (cf. Arkhipov 2009) gertatzen dena, izan ere. Aitzineuskaraz delako aditz komitatiboa zein zen jakiteak ere ez dirudi ezinezko GPren bidez CVC > CV baitugu oinarrizko urratsa (ik. § 4.4.3.2): **khiC*, erroa, beraz, eta ezinbestean *ekhin*; egokitasuna ez da formala soilik, baina baita semantikoa ere. [201]

MA komitatiboetarik bai aurreko atalean aipatu «soziatiboko koord.ak», baina baita beste zenbait gramatikalizazio ere Gineako Golkoko hizkuntzetan ohiko zirela erakutsi zuen Lordek (1973), eta antzekoak ikusi dira gero Asia Hego-Ekialdean, Pazifikoan eta beste eremu batzuetan:

a. Batetik, soziatiboko kasu-marka bera: [202] *aitarekin, inorekin*.
b. Bestetik, instrumentalak, denborazkoak, moduzkoak eta, orohar, adberbialak: *ostikoarekin jo, ostegunarekin etorri, gorrotoarekin itsuturik*… Orobat, *ederki, laburki*…

199. *-n* «inesibotik» dator; Schuchardtek nahi bezala, **-kide-n-*etik ateratzen bada *-kien* eta *-kin* (cf. *ide* ere), *-de-* hori **den* 'FINISH'en gainean eratutako PLURIACTIONAL bat litzateke; hots, Trasken Legearen bidez, izenetako *-te* (*elurte*), aditz ekintza zaharra (*ibil-te-*), forma jokatuetako *-te/-de/-e* (*dute, daude, dabe*) lotu ahal dira. Antzeko zerbait gertatzen da *-he-ta* (topon.atzizki), / *-e-ta* (deklinab.pl.) / *-(k)e-ta* (aditz-izena) eta baita *-tze* (*elurtze*), / *-tze & -tza* (topon.atzizki), *-tze* (aditz-izena) sinonimoekin ere.

200. *-gaz*-i buruz Mitxelenak (1981a) erakutsi zuen bai *-ga* eta bai *-z(a)* ere zaharrak eta orokorrak zirela, eta soilik bien batuketa litzatekeela dialektal eta (erlatiboki: EBZ ondoko) modernoa.

201. Ik. § 4.3.6 (7) **Th- > h-* eta **khin*-en gramatikalizazioaren emaitzari buruz: 2. p. izenordaina, *hi*.

202. *Kin* honek baditu *-n* gabeko alomorfoak eta baita *-la* (= modala) erantsiaz sortuak ere: *-ki, -kila, -kilan*. Noski, hauek askoz garapen berankorragoak izan litezke, *d- > l* aldaketa eta zenbait preposizioren eskubiratzeaz geroztikoa. Egoera modernoaz (xvi-), ik. Padilla (2016).

c. Bestalde, zenbait hizkuntza sinitikotan (cf. Chappell, Peyraube & Wu 2011) objektua (*txerriki*, etab.) eta are datiboa partekatzen dituzte goikoez landa (ik. beheago).

Gainera, Traskek (1977, 1997) datibozko zenbait aditzetan (*dago-ki-zu, dator-ki-o*…) ikusi zuen «dative flag» delakoaren jatorrian «Prep. bat edo MA bat» bide zela, bata zein bestea ez oso bateragarriak «SOV-eransle» hizkuntza perfektu betiereko batekin. Orain MA > preposizio bilakabide zabalduaren aurrean (vs **prep. > MA), horrelako baten garapena dugu, noski.

Etimologia honen justifikazioan ere ez da gaia agortzen: pentsa dezagun *ekhin* (nor-nori AD > nork-nori-zer AD) aditz ezaguna dela dialekto guztietan eta aspalditik izenki lekukotuak dituena (*ekite-, ekingo, ekin*, etab.), ez aldiz horren oinarrizko —aktante bakarreko— omen denean (***edite-, **edingo, **edin*).[203] Horrenbestez, *ekin*-en paradigma *edin*-en datibo-komunztadurari dagokio historikoki (*hura dadin* → *hura niri dakidan*, etab.), baina pentsa liteke korrespondentzia morfologiko hau ez datorrela AEtik baizik eta gero sortu dela. Hasteko, noski, ez dugu inongo komunztadurarik ez forma jokaturik AE zaharrenerako eta, beraz, bai nor-adizki jokatu bat eta are gehiago nor-nori edo nork-nori-zer soilik berankorrak izan litezke.

Halaber, merezi du **edin*-ez gainerako pare bat laguntzaileren X / X + DAT bikoteak orotara begiratzea:

X / X + DAT
1. **edun* : **nin* / **eradun* / *eutsi*
2. **ezan* : **ezan*-dat. / **erazan* / *egin*

Ez dut zehaztasunetan sartzerik baina nabarmenki ERRO SOIL → erro soilaren forma jokatua → ERRO + APLIK → enbor aplikatibodunaren forma jokatuak ez dira zahar-zaharrak, gero eratu eta erregularizatuak baizik. –*Ki* formen berankortasuna[204] ez dator soilik honetatik edo erroaren eskubitara izatetik (ezta ezkerretara morfologia fosildu guztia ere): mendebaleko formetan *jatort* (< **d'atorda*), *jatortzu* (< * *d'atorzu*)… dugu ezkerreko sabaikaritzearekin, *dator-ki-t, dator-ki-zu*… eta gainerakoen eskubiko

203. Badira, jakina, fonetikoki hauetarik erregularki garatu diren *jite-, jinen, jin*, baina jatorri bera izan arren bi aditz diferentetzat hartu izan dira aspalditik, bata gramatikalizatu eta bestea lexikalizatzerakoan tartean sortu osinarengatik (ik. Lakarra 2006b).

204. 3. persona singularretarik kanpo (cf. *jako* baina *jate* oraindik Kapanagak, geroztik zabaldu *jake* analogikorik gabe; bidenabar, testuan aipatuez landa, datiboko komunztadura propio zaharraren aurka doa *iro*-ren historia ezaguna ere, zeinetan datiboko komunztadurak markagarri berankorrak diren (XVIII. m.?).

«datibo-argirik» edo «aurre-datiborik» gabe. Badirudi, beraz, *ekin*-en paradigma aski berandu (EBZ hautsi eta gero, zalantza handirik gabe) hedatu dela gainerako aditz jokatuen datiboko adizkien paradigmak eratuaz. [205]

Ezin da, azkenik, oharkabean utzi *eutsi* (< **edutsi* : cf. *jausi* : *erausi : arrausi ?).* Aditz hau egokiro kokatzen da sail honetako gainerakoen artean. Ezer baino lehen, esan behar da askozaz zaharrago eta hedatuago dela aditz nagusia ('heldu', 'oratu', 'hartu') laguntzaile gisa B-An gramatikalizatua baino; ohar bedi, gainera, jokorik zaharrena nor-nori zela eta gero bihurtu dela nork-nori-zer, gramatikalizatu ondoren, beste zenbait aditzek (*eskatu, jarraitu…*) izandako bilakabide berarekin (ik. Mounoleren lanak aditz mota honetaz). [206]

Bestalde, 1800 aldera (cf. Urgell 1985) *dagidan / degidazun, dagiala / degiola…* 2/3 aktanteren arteko oposaketa neutralizatzen da (> *dagidan / dagidazun, dagiala / dagiola*) baina geroztik zenbait hizkeratan bederen, datiboko forma berriak atera dira: *daidan / deistazun, daiala / deitsola…*; bistan da erro ondoko eta persona-marka aurretiko txistukaria, halabeharrez, aspalditik **edun*-ek hartua zuen datibo ereduaren analogiaz sortu dela.

### 4.5. Aitzineuskararen tipologi aldaketaz

> With its SOV word order, with its preposed complex modifiers, with its post-positions, with its periphrastic verb-forms, with its polypersonal verb agreement, with its lack of gender, of noun classes, and of verb classes, with its uniform inflection of noun phrases, and above all with its thoroughgoing ergative morphology, Basque *remains* today the most typologically distinct language in Europe west of the Caucasus (Trask 1998: 323; etzana nirea da [JAL]).

***4.5.1.*** Zabaldua da etxean eta kanpoan euskararen egituraz honela labur litekeen dotrina bat (Trask 1998 da adibide garbia):

1) euskara eranslea da,
2) SOV hurrenkera du,

---

205. Ez dirudi horiek *jagi / jaiki, ebagi / ebaki* eta gainerakoekin berdindu litezkeenik eta ez soilik geografiagatik, jakina. Aldiz, **khi > *hi / -ki* bilakabidea buruan, *zaio* eta *jako* ez dira beren artean horren urruti.

206. Lazarragaren *derauste*, etab. **eradutsi* (**eradun* + *-tsi*) baten gainean eratuak dira; cf. erdi-ekialdeko *derau-* eta GZko *dirau-* pluraleko (ez singularreko) formak. Orobat, erka bedi *jaitsi, ebatsi…*

3) oso aditz aberatsa,
4) hizkuntza ergatiboa da,
5) atzizki ugari ditu aditzean zein izenean,
6) ez du aurrizki eta preposiziorik
…

Bidenabar, esan gabe doa ezaugarri horiek guztiak ez direla askeak eta loturagabeak beren artean. Azkenik, funtsean, gauzak horrela dira lekukotasunik dugunetik; baina, eta lehenago? Euskarak azken bi edo bost mila urteetan aldaketa aipagarririk gabe iraun duela onartu behar dugu, beste inongo hizkuntza bizitan ez bezala? [207]

Aurreko lan batean (Lakarra 2006a) bildu nituen —erroaren forma kanoniko monosilabiko zaharra eta bisilabismoaren berritasunaz landa— euskararen ohiko irudiarekin nekez batera litezkeen hainbat ezaugarri; oraingo honetan aurreko zerrenda haren bertsio zuzendu eta zabaldua dakart oso, bertan ahal izan dudan neurrian ezaugarri sintaktiko eta morfologikoekin batean fonologikoak ere bilduaz. Gainera, argumentu eta datu askeak eman nahi izan ditut eta, bereziki, egile eta tipologi tradizio ezberdinetakoak (Holmer, Stassen, Donegan eta Stampe, Post, indosfera…), horrela bere holismo eta sendotasuna areagotzeko asmoz:

1. Adjektiboa izenaren eskubitara (V-aitzin duten hizkuntzetan bezala) eta adjektibo-sail itxia, hots, formalki berezi gabeko kategoriarekin (aditzaren azpiatala);
2. Postposizio eta atzizki gutxi, konparatiboki, eta berankorrak, gainera;
3. ISko aurrizki zahar ezezagun berriak (**la-, *sa-, *gi-*) eta ASko beste zenbait, (**da-*, **i-*) lehen ezagutzen zirenez (**ra-*, **e-*) gainera;
4. Zenbait erlatibo eta genitibo lokatibo buruaren eskubira;
5. Silaba irekirako joera modernoa, lehenagoko erro silaba bakarreko itxiaren aurka;
6. Kodako -Cren galera sistematikoa aurrizki nahiz atzizkien gramatikalizazioan;
7. Fortis/lenis oposaketa herskarietan (ez ahostun/ahoskabe eransleetan legez);
8. Hasierako bokalen gehiketa AEZ-az geroztikoa;
9. Hitz hasierako herskari ahoskabeen gehiketa EBZ ondoren;
10. Kontsonante-inbentarioaren hedadura AEZtik AEMra eta honetatik euskara modernora;

207. Cf. Baxter & Sagart (2014: 318-319) txinerari buruz: «We have no reason to assume that any ancient language was typologically similar to the modern languages descended from it». Zehazki, aitzintxinera ez omen zen tonu-hizkuntza, ezta monosilabikoa ere, eta eratorpen-morfologia ugaria omen zuen.

11. Inbentario bokaliko murritza (horrela gordea euskara modernoan); diptongo ahul eta berankorrak;
12. Erroaren forma kanoniko txikia, CVC monosilabikoa;
13. Ergatibo-markaren jatorria bizidunetako lokatibo orokorreko *-ga* postposizioan;
14. Aditz jokatuaren izaera berankor eta murritza (sail itxia);
15. Multzo-Aditz Asimetrikoak (AEZn bederen);
16. Aditz estatiboetarik datozen adjektiboen ugaritasuna, dravidikoz bezala eta tibeto-burmeraren alderantziz;
17. Aspektuaren nagusitasun zaharra denbora eta moduaren gainetik aditzean, tibeto-burmeraz legez eta dravidikoaren alderantziz;
18. Marka gehiketaren bitartezko kasu lokatiboen espezializazio progresiboa; lehenago, kasuok orokorrago bide ziren tibeto-burmeraz oraindik diren bezala. Hortik urrunduaz eta dravidikora hurbilduaz joan da, bada, euskara;
19. Azentuaren berreraiketa berria, azken silaban: erro monosilabikoan;
20. Aurrizkiak eta ez atzizkiak AErako;
21. Koordinazio soziatiboaren aztarnak XIX. mendera arte, horrek dakarren komunztadura eta kasu-marken faltarekin AErako (ik. § 4.4.6.5).

***4.5.2.*** Tipologia ez ezaugarri solteen anabasa loturagabe gisa, baizik eta modulu ezberdinetako (fonologiako, morfologiako eta sintaxiko) ezaugarri nagusien sare bezala ulertzeak sinkronian garrantzia badu, diakronian berebiziko laguntza eman liezaiguke berreraiketa zabal eta sendoagoa egiteko orduan eta baita aldaketa-kateak aurreikus eta azaltzekoan ere (gogora halabeharra dela konparatistaren etsai nagusia). Horrelakoa da, esaterako, Donegan eta Stampek (1983/2004) hizkuntza munda eta monkhmerren artean egindako erkaketa:

| | *Munda* | *Mon-khmer* |
|---|---|---|
| Esaldi azentua:[208] | Beheranzkoa (hasieran) | Goranzkoa (amaieran) |

208. «We further claimed that the complete reversal of structure that occurred in Munda began with a single change from rising to falling accent» (Donegan 1993: 2); cf. «Reversals of rhythm and word order, as Indo-European and in Munda, are not very common in the world's languages. Niger-Congo (Givón 1975) had a progressive shift like Indo-European —falling to rising and head-last to head-first. Tibeto-Burman, given the prefixing character of proto-Sino-Tibetan (Benedict 1972), may have had a regressive shift like Munda —rising to falling and head-first to head-last. A regressive shift entails the construction of an inflectional system (section 3.3), and surely takes far longer than a progressive shift. Judging from the time depth of the far less complete reversal of type in Indo-European, Munda must have a time depth of several millenia» (Donegan & Stampe 2004: 16).

| | | |
|---|---|---|
| Hitz ordena: | Aldakorra – SOV, AN, Postposizionala | Zurruna – SVO, NA, Preposizionala |
| Sintaxia: | Kasua, Aditz Komunztadura | Analitikoa |
| Hitz Kanona: | Trokaikoa, Daktilikoa | Ianbikoa, Monosilabikoa |
| Morfologia: | Eranslea, Atzizkibera, Polisintetikoa | Fusionala, Aurrizkibera edo Isolatzailea |
| Timing: | Isosilabikoa, Isomoraikoa | Isoazentuala |
| Silaba Kanona: | (C)V(C) | (C)V- edo (C)(C)´V(C)(C) |
| Konsonantismoa: | Iraunkorra, Geminatu Taldeak | Aldakorra, Tonogenetikoa, Geminatu Talderik gabea |
| Tonu/Errejistroa: | Maila-tonuak (korkuak soilik) | Ingurune-tonuak/Erregistroak |
| Bokalismoa: | Iraunkorra, Monoptongoak, Harmonikoa | Aldakorra, Diptongoak, Murriztailea |

(Donegan & Stampe 1983: 337; cf. 2004: 3, 16)

Egile hauek egindako munda eta monkhmerraren arteko erkaketan gakoa ez da soilik horiek diferenteak izatea oso; kontua da zehatz eta sistematikoki alderantzizkoak direla, fonologia, morfologia eta sintaxiko puntu nagusienetan, ezaugarri horien guztien oinarrian den azentuaren kokagunean kontrako bideak hartu zituztelako batzuk eta bestek Doneganen eta Stamperen ustez.[209] Tipologia holistiko diakronikoa horrelako kontrakotasunak eta deribak azaltzeko eta modulu guztien arteko loturak zehazteko gai den unetik, asko da aitzina genezakeena berreraiketa konparatu klasikoa nahiz barne-berreraiketa modernoagoa gidatzeko orduan (ik. Donegan 1993: 4-5 ere).

Beraz, baldin eta munda hizkuntzetan bisilabismoa, bokal inbentarioaren murriztapena eta kontsonantikoaren hedadura, SOV ordena, atzizkien garapena eta aurrizkien galera, aditz-multzoaren emendatzea eta beste hainbat berrikuntza lotuak badira beren artean eta «azentua azken» → «azentu lehen», sakoneko aldaketa garrantzitsuenari, orduan euskarak harekin amankomunean dituelarik hainbat eta hainbat ezaugarri, pentsatu beharko genuke noizbait AEk ere «azentua azken» izan zezakeela monkhmerrak legez —noizbait hurbilago Mitxelenarenetik, beraz—, eta ez «azentua lehen» (Martinet), munda modernoak legez. Kasu horretan, —eta hasperenaren distribuzioaren zein atzizkien azterketak ideia honen alde hitz egiten du—, euskara zaharrak atzizki eta

209. Hurbilketa-eredu bera emankor gertatu da geroago tani hizkuntza tibeto-burmen isolatzaile > eranslee bilakabidearen azterketan (cf. Post 2009); marka bedi azalpen susbtratistiko zaharrek ezin dietela eutsi honelako azalpen askoz aberatsagoei.

postposizio gutxi, aditz-sistema sinplea, analitikoa, erro monosilaboak, VO ordena, aurrizkiak eta preposizioak, *bokal gehiago eta kontsonante gutxiago inbentarioan* —baina gogora Gilen gogoetak § 4.3.4 eta § 4.4.5.1—, etab. behar zukeen izan… eta, izan ere, berreraiketak aurrera egin ahala horrelako zerbait erakusten digu gehienbat (ik. Lakarra 1996a, 2006a eta hemen § 4.3).

*4.5.3.* Tipologia holistikoak izan du, noski, Donegan eta Stampe baino lehenagoko langilerik, baita munda eta mon-khmerraren erkaketaz landako aztergairik ere: hor dira, esaterako, Houis-en aspaldiko saio laburra (1970) Afrikako hizkuntzez, —zeinetan bide horretan aurretiaz egindako urratsak ere aipatzen diren—[210] edota Holmerren urte bereko beste bat, ohar interesgarriekin euskararen historiaurreaz… nahiz bibliografian ez dirudien oso erabilia.

Alabaina, azken honi nagokiolarik, aspaldi zaharkitua gelditu den aditzari buruzko zati nagusiaren ondoko ataletan euskarari buruzko ikuspegi tipologiko tradizionaletik kanpora kokatzen da, dela erroarekiko arduraren aldetik, dela —bereziki— hurbilketa holistikoarenetik. Hots, euskara haren «Type I»-ekoa dugu, Kaukasoko hizkuntzekin eta Ameriketakoekin batera; horietan erroa laburra omen da, 2-5 fonematakoa edo (1970: 14). Azentuaz ari, silaba bakarrekotzat duela dirudi: «The nucleus or "root" is the second syllable (…) *which syllable would then in the same way logically require the main stress*» (10); hor bertan (7) euskara eta bere «Type I»-eko enparatuez esaten zaigunez, «as in the latter languages [Kaukasokoetan] the opposition *k* : *g* is not primarily one of voiceless and voiced».

Holmerrek bazuen Donegan eta Stamperen lana baino lehenago azentua, erroa eta sistema morfologikoaren arteko erlazioaren aditzerik ere: «It may thus be stated that Basque originally follows the pattern of so many languages pertaining to Type I, e.g., in America, in having the second syllable from the beginning of a word (or phonetic unit) stressed, a tendency which may possibly have a connection with the *prefix character of these languages*» (9, etzanak nireak [JAL]). Honen ondotik dator hizkuntza eransleetan (Holmerren II. Sailekoak) erroak lehen silaban (eta, beraz, atzizkiak) aurkitzen ditugun bitartean, I.eko hauetan bigarrenean doala.

Nago ez duela iruzkin handiren beharrik; zaila zait azken menderdiko euskalaritzan hain injustoki baztertu eta ahantzitako honen pareko beste lan aberats batez oroitzen.

---

210. Afrikako hizkuntzak bitan banatzen ditu, oinarrizko lau ezaugarri fonetiko eta gramatikal soilekin:
    A: bokal sudurkaririk ez, CVC silabak onartzen dituztenak, «Cé-Cant» determinazio-sintagmak dituztenak eta preposizioak morfema funtzional gisa eta horien aurrean
    B: bokal sudurkariekin baina CVC gabe, «Cant-Cé» eta postposizioekin (1970: 61).

*4.5.4.* Posten (2009) lan bikainean Asia Hego-Ekialdeko hizkuntzen arteko egitura-loturak, ez substratuen eta kontaktuaren bitartez, baizik eta Donegan eta Stampek —baita lehenago Robin Lakoff-ek ere— aldarrikatu eta Sapirrengandik datorren deribaz azaltzen dira, funtsean. Gai honek AEtik euskarara bidean izan den aldaketa modu eta tamainarekin erkatzeko duen garrantziaz jabetzeko, hara Postek taniaren deribaz egindako laneko laburpena:

> Compounding in Tani appears to have been a process of disyllabification, where monosyllabic forms in Proto-Tani have been lexicalised as compounds. This has resulted in a interesting division in the Tani languages, with nouns and adjectives on the one hand being closely aligned, and verbs on the other behaving quite differently. This division is interesting because of the more usual alignment in Asian languages of adjectives with verbs, not nouns. The story of this division is traced through the lexicon, with evidence from morphology, tone, segmental phonology and syllable structure, all showing a shift towards greater agglutination in Tani languages (2006: 41).

Berreraiki genezakeen euskararen egoerarik zaharrenak eransletzat jotzeko arazo larri eta ugariak ditu, atal honen hasieran zerrendatu ezaugarri mordoa edo erro-eredu bisilabikoaren berankortasuna, demagun. Hizkuntza eransle garbiekin (uralikoak, turkikoak, japonikoa, Australiakoak…) erkatzen denean, euskara historikoak haiek baino ezaugarri sintetiko gutxiago eta berankorragoak ditu eta erlatiboki berandu hartu bide zuen modernoki hain famatu den eredurako bidea (cf. Lakarra 2006a). Morfologian AE aurrizkibera (eta preposizio-hizkuntza) izatetik atzizkibera izatera igaro zela —hizkuntza mundak eta zenbait australiar legez— ez da bakarrik argudio formal orokorrengatik ondorioztatu ahal; hor dira, izan ere, *gi-, la-, da-, za-, le-, i- / -ki, -la, -da / -t, -z(a), -le, -i* bezalako bikoteak.

Sintaxiaren analitismoaren aldeko zantzuak ugaldu dira ikerketarik berrienetan: aditzeko pertsona-markak han berandu bilduak ditugu argiro; *dihardukazu*-ra iristeko lehenik **e-da-ra-dun*-ek *inardun*-era iritsi behar du edo **e-da-ra-gotz-i*-k *urgatzi*-ra, gero *dihardut* eta *drugatzula* izango baditugu. Are gehiago, *dator* edo *dakar* lehenago **da(r)-thor* eta **da(r)-khar* izan ziren, ez pertsona, ez denbora, ez aspektu nahiz modu-markarik gabe, «aditz inpertsonalak» Trask (1977)-k eta Gomez (1994)-k ikusi legez.

Forma kanonikoaren azterketa hutsak ez bide gintuzkeen soil-soilik eta zuzen-zuzenean ondorio honetara ekarriko eta tipologia holistikoaren laguntzarik gabe morfemen egituraren «azalean» geldituko bide ginatekeen. Alabaina, erroaren monosilabismoak berak euskara historikoaz oso bestelako hizkuntza («morfosilabikoa») berreraikitzera garamatza. Berba Tymothy Light-ek sortu zuen tonogenesiaren teoriaren barnean (*apud* Post 2006: 43). Handik kanpo ia ezezaguna den arren, Asia Hego-Ekialdean erabili ohi da «silaba = morfema = hitza» oinarrizko batasuna adierazteko. Hizkuntza

horietan morfologizatutako material gutxi eta gramatika analitikoa eta isolatzailea da, aditz multzoen arrasto nabarmenekin eta ADJ kategoria askerik gabe (edo urriarekin). Usu tonu lexikoak dira eta silaba- eta segmentu-egitura sinplea (ik. halaber Janhunenen aitzin-japoniko-aurrekoaren berreraiketazko ohar batzuk § 4.2n).

*4.5.5.* Azkenik, historiaurreko euskara «*with*-hizkuntza» zela onarturik (garai historikoan horren aztarna ugari utzi zituelarik), behar dugu onartu Stassen-ekin (2000, etab.) AEk, bereziki AEZk ez zuela flexiorik ez ISn ez ASn eta ADJ ez zela kategoria askea baizik eta Aditzaren azpiatal bat (cf. § 4.4.4). Honako hauek AEZren egitura historian zehar aurkitzen dugunaz guztiz bestelakoa zela —funtsean hizkuntza isolatzaileen tankerakoa— aldarrikatzeko frogak dira, nahiz usu egitura modernoa zahartzat eta are betierekotzat hartu.

Are gehiago, Stassenek (2014) hizkuntzak «txuri» eta «beltz» banatzen ditu ondoko ezaugarrien arabera: «txuri» VO, Denbora gabe, Kasu gabe, WITH-hizkuntza eta «Non-absolute» direnak (4-5 ezaugarri) eta «beltz» kontrakoak; 2-3 dituztenak «grisak» direlarik. Euskara modernoa Europa «gris» osoan den «beltz» nabarmen bakar gisa aipatzen du Stassenek (2014: 335) berariaz, Siberia eta Asia Hego-Mendebala eta Australia-Ginea Berria bezala.

AErako berreraiki ditugun ezaugarriekin ere (*ceteris paribus*), bakar izaten jarraituko luke ia Eurasia osoan eta Sahara arteko Afrikan —baina orain guztiz «txuri», jakina—; bere kideak Sinosferan, Sahara hegoaldeko Afrikan eta ia Ipar nahiz Hego Amerika osoan lituzkeelarik.[211]

211. Alabaina, honelako gertakariek ez dituzte laguntzen egileak lanaren akabuan «areal linguistics» eta «typological linguistics» elkarrengana hurbiltzeko egiten dituen saioak. Zalantzarik gabe «Map 6 may provide some renewed credibility for concepts like "Amerind" and "Nostratic"» (2014: 336) bezalakoak irensteko bixigarri tipologikoak ez dira aski; cf. § 2.5.2.

Aitortu behar dut lan hau (bereziki § 4.5) idazterakoan ez nuela ideiarik ere (eta ez bide nintzen bakarra) Echenique eta Sánchezek (2005: 45) aipatzen duten Tovarren ondoko balentriaz: «…Se puede pensar que, en veinte siglos, su sistema ha debido sufrir cambios importantes, pero no es necesario imaginar una transformación radical del mismo, pues según nos ha dejado bien sentado A. Tovar en un trabajo póstumo relacionado con la reconstrucción de lenguas en el pasado (1997) una lengua puede mantener el mismo tipo lingüístico hasta la amplitud cronológica de unos 12.000 años». Damurik, Tovarren ustezko lorpen horrek ez nau batere atzeratzen nire ondorioetarik eta bai berresten haren hizkuntzalaritza historikoarekiko, hizkuntza-berreraiketarekiko eta euskararen historiarekiko ideiez § 1en eta § 2n egin ditudan iruzkinetan.

### 4.6. Aitzineuskararen lexikoaren azterketarako

#### *4.6.1. Oinarrizko zenbait gogoeta*

Gure helburu nagusia atal honetan lexikoaren egitura eta geruza zaharrenak berreraikitzeko hastapenak jartzea da; zail litzateke, izan ere, askoz gehiago aitzinatzen ikerketa oinarrizko nahiz berezituen faltaz.

Ezagun denez, aitzin-lexikoa berreraikiz tradiziorik aurreratuenetan (IE, semitikoan, uralikoan, austronesioan…) gizartearen antolamendua eta kulturaren (ohiturak, mitoak, erlijioa, formulak…) alderdi garrantzitsuenak berreskuratu ahal izan dituzte (gogora, adib., Benveniste edo Watkinsen lanak).

Ezin ahantz liteke, orobat, hiztegia izan arren —batez ere «oinarrizko lexikoan» sartzen ez direnak— gizartearen bilakabidearekiko hurbilen dena, ezin lor litekeela alderdi honetatik ere inongo isla zuzenik eta berreraiketa mekanikorik. Esaterako, oloa Euskal Herrian historiaurretik lekukotua da; *olho* hitza, aldiz, K.o.-ko hainbat mende geroago, mailegu gaskoi gisa (cf. Lakarra 2015a). Kontrakoa gertatu zen *arto*-rekin: Ameriketatik ekarritako landareari eman zitzaion izen hori (*maiz* ere lekukotua da, noski), lehengo *artoa artatxiki*-ra aldaturik.

Mailegaketa-geruza ezberdinen azterketa hain da garrantzitsua hizkuntzaren bilakabideaz ondorio sendoak ateratzeko, non ezin gera gaitezkeen gutxi gorabeherako paralelismoekin («antzekotasunekin»).

Ezin jarrai liteke esanaz, demagun, *golde* lat. *culter*-etik atera zela (cf. *OEH* s.u. *golde* «*Etim*. Posiblemente de lat. *culter*» eta are sendoago Echenique 2016k). *OEH*-k dakartzan lau aldaerak (*golde*, *golda, kolde, bolda)* interesgarriak iruditzen zaizkit, bai erakusten dutenagatik (*go-* > *bo-*, *-e* > *-a*) eta ez gutxiago hor ikusten ez dugunagatik: dakidanez, inork ez du azaldu zergatik Err eta Zn ez den **golte* nahiz **kolte*, ahoskabearekin *l/n* ondoren, *-mentu* eta beste hainbat mailegutan zein ondare zaharreko hitzetan.

Aurrekoa (eta amaierako *-r*-az ere zerbait esan beharko), nominatibotik hartua balitz, jakina, nahiz horrelakoak salbuespen urriak izan. Mailegu gehientsuenetan iturria akusatiboa zelarik, *cultrum* dugu *culter*-ena eta, hortaz, **gulduru* itxarongo genuke baina ez da horrelakorik ageri. Behean aipatzen den *cuitre*-tik abiatuaz ere ez gara *golde*-ra iristen eta, beraz, ohiko «azalpenarekin» jarraitu nahi duenak zehaztasun hauek zuritu beharko lituzke, itxuraz. Beraz, ohiko «azalpenarekin» jarraitu nahi duenak errazkeriak utzi eta gutxienez montaren bateko xehetasun hauek behar lituzke azaldu.[212]

212. Bidenabar, ez dirudi Corominasen *cutral* edo *cuitre*-tik abiatuaz ere azalpenak (nahiz hotsenak, nahiz esanahiarenak) errazago direnik: «buey o vaca viejo, que se destina a la carnicería, derivado del antiguo *cuitre*, que además de reja como en Aragón, conservaría el significado de 'cuchillo' que tenía el latín *culter, -tri* de donde procede». Aurrerago eransten duenez, «la forma navarra

Enparatuetan legez, bada hizkuntzaren barneko interesaz landakorik ere, bistakoa baita goldearen garrantzia antzinako ekonomian eta gizarte osoaren antolamenduan: Caro Barojaz geroztik edo esan izan da goldeak EHan antzinakoak direla, baita erromatarren aurrekoak ere, nahiz *golde* hitza bera latinetik hartutzat izan; orain, esan genezake ez izana eta ez izena ere ez zaizkiola Erromari zor, *golde* ongi azal bailiteke euskararen hitz-eraketa zaharrenaren barnean: **-r > -l* (*zur + -hegi > zilegi, *bur-be > bilbe*, etab.)[213] eta Trasken legearen arabera aditz-izenaren alomorfo zaharrak **-de* izan behar duela jakinik, *gorri + -de* (> *gol-de*, cf. *gar > gal-de*, etab.) genuke, lehena ez 'kolore' adieran baizik eta toponimian ia orokor jarraitzen duen 'biluzi' adiera zaharrenean.[214] Semantikarako cf. *OEH gorritu*$_2$ «Dejar un lugar sin vegetación, roturar». Bidenabar, *OEH*-n bada «Fanega de tierra. *Golde bat lur* (BNc), trozo de terreno que con una pareja de bueyes se puede labrar en un día» ere, orokorra, gainera, aurreko ekintzaren ('biluzte') emaitza, argi oraindik *-de* horretan (ik. § 4.4.6.5 «aditz pluralez»): *Golde bat lur bete bageko tokian*. Izt *C* 143. *Hobe da gizentzea bi golde ongarriz*. Hb *Esk* 151. *Donibane Lohizuko kantoinamenduko goldea da orotarik handiena. Badagokitza 46 ara eta 53 zantiara*. Dv *Lab* 61. *Utzi zioen 600 (sei ehun) hektarako eremu bat, hori baita, 2000 (bi mila) golderen ingurua*, etab.

Lexiko zaharraren azterketa ezinutzizko gertatzen da bestelako alderdientzat (fonologiarentzat, morfosintaxiarentzat) lexikoan duten islaren bitartez berreraiki ahal baitira; euskararen protohistorian beste inon baino areago, duela 2.000 urte hasi baitziren islatzen hitz solteak (okerrago, onomastika) baina soilik duela 550 bat —eresi eta balada zaharrak baino lehen ez da dozena bat esaldi— sintagmak eta goragokoak, eta horiekin euskal morfologia eta sintaxi arruntak.[215]

---

*golde* (Acad.) parece haber pasado a través del vasco, donde *golde* es general a todos los dialectos en el sentido de 'arado'… el tránsito semántico es fácil, máxime cuando se acostumbra a clasificar los arados por el número de rejas que tienen; aunque hoy V. Azkue, para 'reja' se usa *ortz*, propiamente 'diente'. Egile hau ere ez da saiatzen alderdi fonikoa konpontzen, ezta xehetasun semantiko nabarmenak ere.

213. Cf. *estari > estal-, zamari > zamal-, euskara > euskal-, abere > abel-*, etab., nahiz Mitxelenak (*FHV* § 16.7) *zamal-* eta *abel*-en erregela-aldaketa gertatu dela pentsatu; atzizkiari dagokionez, *-de* (< **den* 'FINISH') ISko zenbait pluralen eta aditz-izenaren alomorfo zaharrena da; ik. § 4.4.6.5.

214. Bidenabar, *golde* ez da *l/n* ondoko Err-Zko kasu bakarra; bestetan ere (cf. Lakarra 2013b) aipatu dut *handi*, *-ti* adjektibogile-atzizkiaren *-di, fase sparita*-rekin (cf. *hordi)*, guztiak < **di(n)* 'to come'-etik).

215. Bistan da, fonologia nagusia berreraikitzeko (osoa ez bada ere) aski direla zenbait hitz dozena; cf. Mitxelena (1954a) eta Gorrotxategi (1984) akitanierarenari buruz. Ezinbestean corpus bera erabili beharra dute morfologiarako baina emaitzak ezin berberak izan: ezer gutxi da hitz-eraketaren oinarrietarik kanpo, dela eratorpenaz eta, batez ere, flexioaz eta sintaxiaz.

Ezagun denez, AEren berreraiketa estandarra (AEMrena, zehatzago; ik. Mitxelena 1957a, *FHV;* ik. §3.3) sistema mistoan oinarritzen da —ondare zaharreko elementuen, batez ere konplexuen, analisia + maileguena— baina bistako arrazoiengatik bigarrenari lehentasuna emanaz. Hala zegokion eta horrela egin izana txalogarria baino ez da; alabaina, horrek ezinbestean ekarri zuen maileguen historiaz askozaz gehiago jakitea ondare zaharreko lexikoaz baino. Hala ere, maileguen azterketa horrek asko aberastu du Mitxelenaz geroztik —honen analisia Gavel, Rohlfs edo Caro Barojaren zaharkituak baino askozaz finago eta eraginkorragoa izan baitzen— ondare zaharrekoez esan genezakeena: horrela, demagun, *anhoa* (< **anoha*) lat. *annona*-tik aterea delarik, bistan da *anaia*-ren aitzin-formako sudurkaria ezin izan zitekeela **ardano*-koa bera[216] (> *ardâô, arno, ardo, ardan-*, etab.).

Mailegaketaz ari garelarik, latinetikoa da ia emankor bakarra (cf. §§4.6.3-4 eta beherago) eta horrek, noski, muga aski argiak ditu: ezin lagun gaitzake latina eta euskara K.a.-ko azken bi mendeetan kontaktuan sartu baino askozaz lehenagoko hizkuntza egoerarik berreraikitzen; hortik aurrera ondare zaharraren analisian barneratuaz baino ezin genezake hizkuntza egoera eta geruza arkaikoagoetara iritsi.

#### *4.6.2. Aitzin-aberriaz eta aitzin-kulturaz*

Edozein aitzinhizkuntzaren kokapen eta data arazo larriak dira. AEren kokapenari dagokionez ikusi dugu (§2.10.2.) ez dela oinarririk euskararen lurralde historikotik kanpo —Pirinioaren bi aldeetara, Ozeanotik ia Mediterraneo itsasora eta Garona eta Ebro bitartean— horren sorrera —hau, seguruenik, lurralde askoz txikiagoan izan bide zen— edo lehenagoko edo beranduagoko (baina historiaurreko) kokagunea ezartzeko.

Datari dagokionez, komeni da ez nahastea lurralde horietan edo inguruetan Paleolito zahar edo berritik izan zitezkeen euskotar leinuenak eta hizkuntz(ar)enak: ez da modurik jende horiek —arraza garbiko edo nahasiko izan— AE hitzegiten ote zuten bermatzeko. Honek ez du kentzen, jakina, Bosch Gimperaren 1925eko «no es posible explicarse la presencia del pueblo pirenaico en sus hogares más que como habiendo vivido allí desde tiempo inmemorial, procediendo de los antiguos grupos paleolíticos de la región» (Barandiaran 1934: 356) aldatu beharrik edo bigarren honen «los restos humanos correspondientes a la época eneolítica permiten afirmar la identidad de raza entre los hombres que habitaron por entonces los Pirineos occidentales y los actuales vascos» (396) deuseztatzea.

216. Gogora bedi (cf. §1.2) dialektoen arteko konparaketa ahulagoa eta eskasagoa dela haietariko bakar batekin egin genezakeen barne-berreraiketa baino: cf. **ardano* / **e-da-ra-dan-o*.

Kultura pirinaikoari Barandiaranek ondoko mugak jarri zizkion: «[incluía] el actual País Vasco; se extendía por el Alto Aragón hasta Cataluña y comprendía una extensa zona en el S.W de Francia con su centro principal en los Altos Pirineos y Alto Garona». Ez dirudi inolaz ere euskal hizkeren aztarnetarik urrutiegi gelditzen denik baina, nolanahi ere, gogora bedi hurbilketa arkeologikoak bi arazo izan ohi dituela hizkuntzalarien lanarentzat: «The farther back in time we go, the larger the areas covered by archaeological cultures tend to be» eta «archaeological cultures tend to be much too early to correspond to what is otherwise known of the chronology of the linguistic map» (cf. Janhunen 2009: 66).[217]

Janhunenek behin baino gehiagotan gogoratu turkiarren eta turkieraren adibide ezaguna gogoratzea ez da hemen lekuz kanpo izango: egun, hizkuntza hori da bere familia turzikoan nagusi eta baita horren ordezkari-moduko ere. Badakigu, ordea, duela mende batzuk Anatolian greziera eta armeniera eta lehenago hitita, luvita eta beste zenbait hizkuntza IE —eta turzikoarekin zerikusirik gabeko hizkuntza ez-IE batzuk— hitz egiten zirela; aldiz, xv. mendera arte, turkiera Mongolia aldean hitzegiten zen. Gaur egun, ipar-ekialdeko aitzin-aberrian gelditu ziren turkiar leinukoek beren lehenagoko hizkuntza galdu eta hizkuntza mongolen bat dute hartu; azken 5-6 mendeotan turkieraz mintzo direnak antzinako hititen eta enparatuen leinukoak dira, hizkuntzak aldatu arren, askazikoek hor jarraitu baitute funtsean:

> Even if distant comparisons can yield positive results, it should be recognized that languages move on the map, and they move fast. For this reason, the chances of locating homelands and protolanguages with any exactitude are equal to nil. The recent trend of dating linguistic continuities with the help of human genes and archaeology involves a serious misunderstanding of the processes that govern linguistic expansions (Janhunen 2008).

Hizkuntzazko frogarik ez delarik, ez da duela 8 edo 10 mila urte Euskal Herri historikoan eta inguruetan ziren leinuek AE hitzegiten zutela baieztatzeko modurik ere, eta are gutxiago —lurralde horretatik izan omen ziren hedakundeen bitartez— AE hona edo hara eraman zutela esateko. Izan ere, hori soilik lekukotasun linguistikoak aztertuaz erabaki liteke eta gogora euskara edo AErekin lot litekeen ezeren benetako arrastorik (h.d., arrasto linguistikorik) ez dela egundaino erakutsi lurraldeotatik kanpo (ik. § 2.9.2 eta 2.5 hasierako aipuak).[218]

217. «Franco-cantábrico» delakoaz Paleolitikoan «ocupa la costa oceánica desde Asturias hasta Vasconia y se extiende por Francia hasta la Dordoña y Ariège» zioen Barandiaranek (1934: 361).

218. Hemen eta nonahi oso bestelakoak dira Estornesen iritziak, ulertzekoa dena hizkuntzalaritza

Berreraikitako lexikoa erabili izan da hainbat familiatan —IEn, semitikoan, austronesioan, algonkiarrean, uralikoan, salishean…— aitzinhizkuntzaren jatorri eta hedadura nahiz data ikertzeko. Gure kasuan, dakidanez, ez da Euskal Herri historikotik urruneko lurralderen batera atxikitzeko arrazoirik; bai, aldiz, lurralde horren zatiren bat (Nafarroaren hegoalde muturra, Bizkaiaren mendebalekoa) hautagaietarik baztertzeko. Kronologiari dagokionez, *aizto, aitzur, aizkora, azkona*… eta enparatuen familiakoez esanak dira dagoeneko: ez da batere garbi horiek guztiak *haitz*-etik atereak direnik (*aizkora* ez behintzat) eta, balira ere, ez da hor euskara paleolitikoarekin lotzeko aski frogarik, ez bederen, alemaniera eta beste hainbat ere garai berekotzat jotzeko baino gehiago (Gorrotxategi 1998, 2002, 3. kap.).[219] Egile berak dioskunez, barazki (*porru, kipula, piper, baba, leka, olho*…) eta zuhaitz fruitudunak (*gerezi, muxika*… —baina ez *udare* [< *uda* < *euda* (Mikoleta) < **eguda,* cf. *bat/barda* < **gau haur da*] eta *sagar* < **sa-CVC*]—) latinetik edo erromantzetik hartu dira; baina animalia askorenak, ez soilik *hartz* eta *otso* piztienak (*behi, ardi, zaldi, hor, zakur*, *ahuntz, aker, asto*…), eta zenbait zuhaitz eta landare-izen (*haritz, arte, gari, arto, mahats* eta are *ardo, sagardo…*) bertokoak dira, alegia, euskararen bitartez azaldu beharrekoak edo «ondare zaharrekoak». Baina noizkoak ote? Zehaztu gabeko historiaurrean gara.

### *4.6.3. Maileguen azterketaz*

> From a cultural-historical point of view, a transfer of words (or other language material) is interesting because this usually reflects cultural influence between speech communities. From a linguistic point of view, adopting a feature previously used in another language, the donor language often leads towards interesting restructuring processes which may also tell us more about the nature of the receiving language, as we shall see below (Dimmendaal 2011: 179).

Euskarak ahaide ezagunik ez izanik (ik. § 2), bere historia egiteko biderik ohikoena —hizkuntzen arteko erkaketa— bide antzu eta agorra dugula aspalditik da ezagun. Gertakari honek, noski, ez du ezinezko bilakatzen haren historia egitea —inoiz esan izan den bezala— baina bai eskatzen du gainerako hurbilketa-metodoak eta lanabesak ahalik eta gehiena lantzea

---

diakronikoarenaz oso bestelako hurbilketak hautatu baitzituzten hark eta bere jarraitzaileek euskararen historia garatzeko orduan.

219. Mitxelenak **anetz/anitz* berreraikitzen du *haitz*; *EHHE*-n **han* (*han-di*, *anhitz*, *ahuntz*, eta abarren errotik abiatzen gara eta, beraz, 'harri' bigarrenkaria litzateke, beste hizkuntza batzuetan bezala.

eta fintzea. Hurbilketa hauetarik edozein hizkuntzatan emankorrena lirudikeen barne-berreraiketa oso berandu arte atzeratua izan da euskalaritzan, bai horretarako beharrezko zen filologia aurrelana ez delako garatu berandu arte eta baita barne-berreraiketak oinarri duen teoria linguistikoaren aitzinamendua oso mugatua izan delako gure artean. [220]

Mailegaketa-ikerketek —ez horren tamaina, egokitasun, behar edo estetikari buruzko gogoeta eta eztabaidek— hizkuntza historialariarentzat berebiziko garrantzia agertu dute Martinet eta Mitxelenarekin:[221] lehenago sarritan inperio betierekoaren eta kultura garaitezinaren isla edo hondar gisa hartzen zen bitartean, geroztik maileguen ikerketa hizkuntza hartzailearen historia argitzeko duen aukeraren arabera baliatu izan da. Izan ere, gutxi edo asko (usuenik gutxi) edozein hizkuntzaren historia ikertzeko edo haren berreraiketa osatzeko baliagarri da mailegaketa —ik. § 4.6.3 hasierako Dimmendaalen aipua; Lakarra (2012)-n Europako, Afrikako, Ameriketako nahiz Asiako hainbat kasu bildu dugu, aldez edo moldez lagungarri zirelakoan—, baina seguruenik latinetik edo erromantzetik euskarak hartutakoaren azterketaren emaitzak parekorik ez bide du: munduan hizkuntza gutxik du latinaren edo erromantzeen egitura (fonologiatik has eta lexikora, gramatikan barrena) nahiz horren historia baino ezagunagorik eta bistakoa da —mailegatuaren bitartez ezagutza horren isla apalena euskararen ondare zaharraren ikerketan erabilgarri bihur litekeen neurrian— euskararen historiak aitzinamendu larria izan zezakeela.

Aurrekogatik, AEMren ikerketa estandarrarekiko hurbilketa ohituraz barne-berreraiketaz garatu dela esan arren (cf. Ringe 2003, Touratier 1990), ez genuke akats barkaezinik egingo berreraiketa hori «mistotzat» joko bagenu: ondare zaharrekoarekin batera eta horren azterketarako oinarri eta eredu neurri handi batean beste hizkuntza bat(zu)ekiko erkaketak jarri baitu.

---

220. Mitxelena (1981a)-eko ikuspegi-aldaketaren oinarri eta ondorio linguistikoak ez dira zehaztu (cf. Lakarra 2014). Ez da hutsune bakarra kronologian eta periodizazioan. Honi dagokionez, aldaketa garrantzitsu baterako ik. Mounole & Lakarra (liburu honetan) non Euskara Arkaikoa «1545-1600» datatu beharrean, «1400-1600» datatzen den irizpide linguistikoetan oinarrituaz.

221. Mitxelenak beti oso gustuko izan zuen eredu bat aipatzearren, Jacksonek, esateko, kronologia absolutuak eraikitzeko britanierarekin kontaktuan izandako beste hizkuntza batzuen kronologia absolutuak eta laguntzaren bat eman lezakeen zenbait sail erabili zuen lanabes gisa bere liburuaren lehen zatian; eta astiro eta zehatz miatu ondoren, britaniera zahar eta berriaren artean izandako aldaketa fonologikoen kronologia erlatibo eta absolutua miatu zituen bere 1953ko lan klasikoan. Ahultzea (*lenition*), azken silaben galera, erdiko bokalen sinkopa, espirantizazioa eta kantitate-sistema berria… ordena honetan gertatu zirela eta guztiak 400-600 urteak bitartean koka litezkeela garbitu zuen (cf. Schmidt 1991: 2).

### *4.6.4. Zelta eta euskara*

Arkeologiak, historiak eta are onomastikak erakusten dute historikoki «Euskal Herri» deitzen dugun horretan zeltaz mintzo ziren herriak bizi zirela eta, beraz, aukera asko dela haien eta euskara edo hizkera euskaroideekin kontaktu-moduren bat izatea. Honek guztiak, hipotesi gisa, esku ematen du galde egiteko latinetik eta erromantzetik hainbat hartu duen euskarak ez ote zuen berdintsu egingo aurreko hizkuntzetarik, nahiz zelta, nahiz gainerakoetarik; ez da esan beharrik, bestalde, latinetikoen azterketak AEMren azterketarako ekarritako laguntza buruan, latinaurreko IE hizkuntzen eragina larria balitz ezinutzizkoa litzatekeela haren azterketa AEren eta, beharbada, AEZren berreraiketarako.

Alabaina, hizkuntzazko helburu eta galderak diren partetik, hizkuntzaren aldetik erantzun behar dira horiekiko hipotesiak. Schuchardt eta beste asko (Tovar, Holmer, etab.) aritu dira zeltaren eta gainerako IE hizkuntzen eta euskararen antzekotasunak erakusten; horien ondorio dira erkaketa-saio ugari eta hauek hartu ohi ziren garai batez —orain ere bai zeltomanoen eta erromanista atzeratuen artean— latinaurreko IE hizkuntzen eragin nabarmentzat.[222] Mitxelenak (1964a) eta Gorrotxategik (1987b) erakutsi zuten, ordea, xehetasunetara joaz geroz, gauzak ez direla horren garbi; zehatzago, azterketaren emaitza seguruak oso urriak direla. Funtsean zera da, ea nolako baldintzak ezartzen ditugun euskal hitz bat latina ez den beste hizkuntza IE batetik zuzenean datorrela onartzeko.

Mitxelenak honako irizpideak finkatu zituen:

1. Deribazio ona izatea fonetikoki eta semantikoki.
2. Nondik norakoak garbi behar du; hots, seguru behar dugu izan bere IEtasunaz.

---

222. Arestian norbaitek Interneten ondokoak eman ditu zeltikotzat «bere ustez» (ez da iturririk ez argudiorik), ezagutzen dudan zerrendarik luzeena osatuaz: *akats, akets, akuilu, akara, alde-aldamen-aldapa-aldats, andere, aran-okaran, arantza, ardo, argi, argal, arrano, arraun-erramu, bago/pago, bargo, berro, berun, begun, birrin, burdin-burni, dundu-durunda-durundi, elai-enara-ainara, elge, erbi-erbiunide, erreka, erro-errape, eta, ezko, galga, ganga / gangar, gar / gori, garaun-gari-garagar, garbi-garden, garrasi, garratz, gereta / kereta, gezi, gona, gorosti / goroldio, gorta / korta, guda / gudu, gurdi, hagin, haltz, harlauza / lauza / legar, hartz, izokin, kai, karra egin / karraka / karrada / garraio / karraio, lei / lerde / lerzo / lerra / lirdinga /, leka / lekeda, lika / likatsu / likits / leun, maite izan, mando, mantar / mantal, mardo / mardul, meha / mehatze, meleka, mende, mendi, moko / beko, muino, nagusi, orkatz, pertz, pitika / pitin, praka, sasi, tegi, trakal /trakets, ui, urki / burki, urte, zilar, zorri.*

Dagoeneko laurdenak —uste-emaileak aipatzen ez dituen— Mitxelenak eta Gorrotxategik zuzenean jazarturiko usteak dira eta beste hainbeste (*ardao, arrano, birrin, garden, garratz*…!) zuzenean iruzkindu gabeak jatorri argia baitute. Ikusi egin behar gainerakoetarik zenbatek gainditzen dituzten, besteak beste, testuan azaldu Mitxelenaren irizpideak.

3. Erkaketa euskal hitzen eta gainerako hizkuntzetako hitzen artean behar da egin, ez hitz eta erroen edo erro eta erroen artean.
4. Arrazoiak behar ditugu izan delako hitza mendebaleko IE hizkuntza zahar batekoa zela onartzeko, hots, euskaratik noizbait gertu izan den batekoa.
5. Frogatu behar da latinaren edo erromantzeen bitartezko transmisioa ezinezko dela.

Baldintzok onarturik —eta horiek dira gutxi gorabehera edozein eremutan erabiliak—, proposamen askok oso nekez gaindi litzake langak; ordea, linguistika diakronikoak oinarri sendoak izateko hobe hertsi izan ezen ez «liberalegi»: Meilletek zioenez, halabeharra da etsai nagusia historia (erkaketa, berreraiketa…) egiterakoan.

Kontuan izan behar da antzinako iturriek oso denbora labur baten lekukotasuna ematen digutela: pare bat menderena euskara-zeltibero kontakturako eta zertxobait gehiago galo-euskararentzat, geroztik bi hizkuntza horiek erabat galdu baitziren erromatarkuntza ondoko latinizazioarekin. Euskara bi hizkuntza zelta hauekin kontaktuan izan zen, bada, gutxienez;[223] bestalde, etorki bereko izaki, gauza asko batera izan arren, ezberdintasunak zituzten fonologia, hiztegi eta sintaxian. Euskara eta zeltaren arteko konparaketak duen lehendabiziko arazoa hizkuntzon antzinako *corpora* eskasak dira. Untermannek eta enparatuek deitu bezala, *Restsprachen,* «hondar-hizkuntzak» dira, eta hizkuntz azterketak —kasurik hoberenean ere— ezin du horietarik sistemen zirriborro bat baizik erdietsi. Gauzak honela, ez da beste aterabiderik hizkuntza neozeltikoetara jotzea baizik. Hauen artean irlandera nahi eta nahiezkoa da, galesa, korniera eta bretoiera baino kontserbatzaileago baita alde batetik eta bere lehen testuak aspaldikoak baitira —VII. mendekoak, baina batzuk bi eta are hiru mende lehenagokoak, askorekin familiako zaharrenak—, bestetik. Euskal hitz bat mailegutzat errazago joko da zabal bada zelta hizkuntzetan, nahiz goideliko, nahiz britonikoetan, eta areago galoz eta zeltiberoz ere lekukotasunik balu.

Korrespondentziak aurkitzeko lana zailtzen duen beste arazo bat zeltak literatur aurreko garaian (Aro aldaketatik Erdi Aroko lehen testuetara bitartean) pairatu aldaketa ugariena da. Hauen artean garrantzitsuenak lenizioa, hasierako aldaketak, azken silaba galtzea, erdikoen sinkopa, bokal-infekzioa, etab., dira, guztien artean hizkuntzari beste aire bat eman ziotenak. Tovarrek, esaterako, ez zuen hau kontuan izan eusk. *hogei* eta gal. *ugeint*, bret. *ugent* parekatzean: forma hauek **wi-kṃti* dute iturburu zelta zaharrean; soilik gero, hizkuntza zeltak aspaldian euskararen auzo ez zirenean, gertatu zen **ṃ* > *am*

223. Baskoien artean eta batez ere, bardulo eta karistioen artean, euskaldun (huts) ez zirenak ere edozein eratako hizkuntza edo hizkera zeltaren bat erabiltzea da aukera logikoena; ama-hizkuntza iberiera zutenak urruti zirela dirudi (ik. De Hoz 1993, 2009, 2010-11, 2011).

bokalizazioa, **vikanti* > **viganti* lenizioa, **viganti* > **vigenti* *i*-umlauta, azken bokala gal eta *wi* > *u*. Beraz, aipatutako euskal hitzak juxtu behar ez zuenaren antza du, eta Tovarren hipotesia ezin manten daiteke; beste gauza bat da antropologo zenbaitek uste izatea 20ko zenbaketa zelten eragina dela; hitza behintzat ez.[224]

Aipatu aldaketok mailegu-gaiak izan zezakeen forma zelta zaharrenarekin konparatzera garamatza, ez modernoarekin; hots, latinetik askozaz hurbilago den zeltarekin. Hortaz, usu ia ezinezko da formaren aldetik mailegu batzuk latinetiko ala zeltatiko etorkia duten erabakitzen: *zarika* 'zuhaitza' nahiz **salik* zeltatik nahiz *salice(m)* latinetik etor daiteke. Bere dokumentazio urria, euskalki-hedadura txikia eta toponimiako erabilera eskasa gogoan Gorrotxategik (1987b) latin-erromantzetiko mailegu berri xamartzat du.

Historikoki zeltek eta euskaldunek —edo zelta hizkuntzek eta euskarak— izan harremanez gutxi badakigu, are gutxiago historiaurrerako: ez dakigu euskaldunak eta zelta hizkuntzen hiztunak noizdanik ziren kontaktuan, ez eta nolakoa zen K.a.-ko VI. mendeko zelta, ez eta geroko dialekto-zatiketa hasia zen ala «zelta batutik» hurbil zen, edota harreman iraunkorrik izan zen gainerako IE herriekin. Hau guztia funtsezkoa da Hegoaldeko nahiz Iparraldeko antzinako hizkuntz egoera aztertzeko. Baina batera zein bestera, gutxieneko oinarriarekin erkaketak burutzeko segurantza urria da oso Mitxelena eta Gorrotxategiren miaketaren ondotik eta urritasun hori areagotuaz doa (cf. 236. oh. *adar*-ez).

Euskarak zelta aurreko IE herriekin eta hizkuntzekin kontaktuak izan zitzakeenez gero, «IE zehaztugabetzat» jo izan dira —lehenik zeltatzat jo ondoren— goian aipatu Mitxelenaren baldintzak (eta are arinagoak ere) betetzen ez zituztenak. Adibide garbiena *hartz* da. Pedersen eta Tovarrek irl. *art*, galo *Artio* «hartz jainko emea» eta gal. *arth*-ekin konparatu zuten. Meyer-Lübke eta Holmerrek *t*-ren asibilazioari ez zioten oinarririk aurkitu eta ez zekiten nondik erdiets zezakeen *h*- edota *-o* gal. Baina antzekotasuna polita zenez eta euskaraz hitz zaharra (akit. *Harsi*, genit.), pentsatu zen (asmatu zen, hobe) **r* bokalikoa zeltak bezala (**r* > *ar*) aldatzen zuen eta, latinak bezala —baina zeltikoak ez

224. Bidenabar, —Tovarrek eta bestek hau jakin ez arren, dirudienez— aski eta sobera izan arren, testuan aipatuak ez dira erkaketaren akats bakarrak: 1) *ugeint*-etik euskararen fonetika historiko estandarrari jarraikiz ezin da *hogei* eratorri (cf. 15. oh.); 2) ez da arrazoi partikularrik pentsatzeko *hogei* denik azken 2.000 edo 3.000 urteotan egitura (moderno) horri, zirkinik gabe, eutsi dion euskal hitz bakarra. Bestalde, eusk. *hogei* ere ez da betidanikoa Tovar- eta erkaketaren alderdi honetaz arduratu ez arren: aski da pentsatzea *$h_3$ > $h_1$ jazo dela (eta, beraz, lehenago *-$n_3$- > -$h_3$-) konturatzeko hitza zeltak inguruotarik desagertu eta gero heldu zela forma horretara; orain, Mitxelena eta Gorrotxategiren argudiaketaz landa, aipatu $h_3$ > $h_1$, lehenagoko *b*- > *ø*- eta diptongoaren modernotasuna ere hor ditugu. Ik. 14. oh.-ean *hogei*-ren Orduñaren iberieraren bitartezko azalpenaz.

zuen horrelakorik— *t*-ren ordez txistukari bat (*ursus*) zuen IE hizkuntza batetik etorriko zela. Gorrotxategik markatzen duenez, ordea, hipotesi-trikimailu polit eta grinatsu horrek arazo larri bat du gutxienez: ez da horrelako hizkuntzaren arrastorik Europa Mendebalean.

Gainera, eta gertakari hau ez da markatu ohi, komeni bezala, erants genezake *hartz*-ek ez duela bere egituran mailegutzat hartzera behartzen gaituen ezer: cf. *her-tz, hor-tz*, batetik, eta *haR-i* (cf. *arre* 'harri kolorea'), bestetik. Gogora bedi hizkuntza IE zenbaitetan, tabuagatik edo, 'hartza' kolorearen bidez (cf. Mallory & Adams 2006: 333) izendatu dela (baita bere zaletasun ezagunagatik ere: «ezti-jale»). Ez dut ikusten zergatik ez zen antzekorik gertatuko AEz: *hartz*-en osaketa *hortz*-ena edo *beltz*-ena bezalakoxea dugu: *har-tz* : *hor-tz* : *bel-tz,* **har*, *harr-i*-ren eta *(h)arre*-ren oinarritik; azkena *-e-* epentesiaren gainean (hots, antzinako lokatibo zaharrarenean; cf. § 4.4.5.2) gehiketa/berranalisiz eratua dugu, *atze*, *aurre*, *ase*, eta enparatuetan legez; ik. § 4.3.6 & 4.6.8 gehiago **khar* > *har* eta *harri-hartz-arre*-z.

Mitxelenak (1964a) edozein hizkuntzatan ondare zaharreko lexikoaren eta hitz ibiltarien artean bereizi beharra aldarrikatzen du, inoiz gorabeherak izan arren. Bada, harrigarri begitantzen zaio zeinen latinaurreko hitz IE gutxi aurkitzen den euskal lexikoan. Horrelakorik ikusten ez duenez, eskasia horren arrazoiren bat bilatu beharra ere otu zitzaion. Arrazoiketa honelatsu litzateke: erakunde, gai eta moda aldakorrei zegozkien hitzok sartu bide ziren euskaraz baina, beranduago, etengabeko latin-erromantzearen eraginak ezabatuko zituen, inoiz oso antzekoak ezarriaz. Egungo egunean zeltatikoen eta latinetikoen arteko hori ezin frogatu ahal den arren, bai, aldiz, latinetikoen eta erromantzetikoen artekoa: *dekuma, bak(h)atu, zeinhare* > *detxema, pagatu, seinale*. Hots, erromantzetik jasoak ez zuen soilik euskal jatorriko ondarea lurperatu baina baita lehenago bertakotutako latinetikoa ere; beraz, aukera hau kontuan izan behar da euskararen lekukotasunaz mintzatzerakoan.[225]

225. Koch-ek (2013) bestelako iritzia du, antza, euskaran izango liratekeen latin-aurreko geruzaz mintzatzean baina ez du delako iritzi horren aldeko froga bakar bat ematen, ezta aurreko bibliografia on zein txarrik aipatzen ere. Bidenabar, euskaraz nahiz erromantzez zeltatik hartutako hitzen urriak ez du batere laguntzen «euskalduntze berantiarra» (cf. § 5 akabuko oharrak), menderik mendez Bizkai-Gipuzkoa-Araban zeltaz mintzatu omen zirenak, arrazoi misteriotsuren batengatik egun batetik bestera beren hizkuntza utzi eta euskara «akatsgabea» hitz egiten jarri izan balira bezala.

### *4.6.5. Oharra geruzez eta kronologiaz*

Hori ikusten da dagoeneko AEren berreraiketa klasikoan (= AEM) eta, zeresanik ez, AEZn: lehendabizikoan, esaterako, herskari bortitzak ezin berreskura litezke mailegu soilak baliatuaz, baina bai (funtsean) txistukari eta ozenetan (ik. § 3.3.5). AEZren fonologiaz, aldiz, ezer gutxi antzeman genezake maileguetarik abiatuaz, eta hori bera gertatzen zaigu morfologian, sintaxian eta bestelakoetan, lexikoa barne. Dagoeneko (§ 4.5) ikusi dugu AEZn hizkuntza isolatzaile bat genuela, morfema lotu gabe edo oso gutxirekin. Geroago hasten dira agertzen aurrizkiak nahiz ISn, nahiz AS oraindik jokatugabean; askozaz beranduago —aldaketa tipologikoa aurreratua zelarik— atzizkiak eta postposizioak (hauek egungo egunean ere gramatikalizazio gradu-apala dute).

Hitz-eraketako ondoko lau geruzen hurrenkera aski garbia da, batez ere (1-2)-ren lehentasunari dagokionez.

1. *odol, zezen, gogor*: CVC → $CV_1CV_1C$.
2. *sabel, gibel, labur*: CVC → CVCVC.
3. *bildur, berdin, astun*: CVC → CVCCVC.
4. *gazi, zaldi, urte*: CVC → CVC(C)(V).

Lehen bi sailetan euskararen historian jarraipenik izan ez duten AEren ezaugarriak ditugu (ik. § 4.1(d1-d2)), duela mende asko —milurteko asko, hobeto— fosilduak; halere, beren kronologia absolutuari buruzko oinarrizkoa jakiteaz gain —biak agortuak ziren latinarekin kontaktuan sartu aurretik edozeinereko maileguk (izen, aditz edo bestelakok) ez baitu ez aurrizki ez erreduplikaziorik pairatu ondare zaharreko hitzen erara—, ondare zaharreko hitzen ikerketaren bidez zerbaixka jakin genezake haien arteko kronologia erlatiboaz ere. Erreduplikazioak dirudi aurrizkiek baino zaharrago edo, gutxienez, hura desfuntzionalizatu zen lehenago: **e-* aditz aurrizkiari so eginaz, ohartzen gara nahiz *e-dVC nahiz *e-lVC direla; hots, **d- > l-* bilakabidea baino lehen (AEZ) edo haren ondotik (AEM) eratuak direla, Mitxelenak (1957) bigarren garaian *d-* soilik fonosinbolismoetan, maileguetan eta orainaldiko aditzetan izango zela diosku. Horrenbestez, AEZko **d*-erro gehienak *l*-erro bilakatuak ziren AEMrako (*FHV*-n iradokitzen denez) eta beste askok **d-* galdu zuten *adar, adats, eder, odol* eta gainerako erreduplikazioetan, nVC-erroen erreduplikazioetan bezalatsu: *ahal (< *nal), ihin-tza (< *nin), ohol (< *nol)*, etab.

Aldiz, *dVC erroenak izan arren, ez da lVC erroren erreduplikaziorik: ***lu-lur*, etab., eta beraz, **d- > l-* gertatu ondoren ere aurrizkiak gehituaz hitz-eraketak jarraitu zuen arren —horrela **datz > latz* → **sa-latz > sarats*, cf. Lakarra (2015b) nahiz **din > *lin* → **elin > *erin*, cf. *herio < *e-lin-o*)— ez zen beste horrenbeste egin erreduplikazioaren bidez.

Barne-berreraiketak berezko du kronologia erlatiboa eta baita geruzak erabiltzea ere: *ardo, ardao, ardan-, ardâô* eta gainerakoen artean zein zahartzat eta zein berriagotzat dugun beharko da erabaki, eta baita multzotan bildu *-n-* >…> *-n* eta -$V_3$ > ø pairatu dutenak berba honetaz landa gainerako hainbat familiatan ere. Kasu honetan gehienetan baino errazago jardun genezake kronologia absolutuak lortzerakoan ere, hizkuntza barneko gertakariak latin-erromantzeetakoekin kateatzen baitira: izan ere, erakutsi delarik (cf. Chambon & Greub 2002) aitzingaskoieran v. mendearen hasieran gertatua zela *-n-* > *ø*-ren zenbait urrats, eta aldaketa hori Luchairez geroztik euskara-akitanieraren substratu-eraginari lotutzat dutelarik hizkuntzalariek, pentsatzekoa da hura baino lehen euskarazko **-n-* > *-h-* (>- *ø-*) ere hasia zela; esaterako, *n* > *h* sudurkaria gertatua zela dagoeneko. Honenbestez, Mitxelenak ezarritako tarte luzea (akitaniera akabutik [III. m.] lehen lekukotasun onomastikoetara [X. m.] bitartean asko estutzen dugu, zazpi bat mendetatik mende-erdi edo mende-exkasera (III.aren akabutik IV.aren erdi aldera edo).

Barne-berreraiketaren jardunean oinarri nagusia alternantzietarik dator: *x* morfemak *y* aldaketa-legearen bitartez bi alomorfo hartzen ditu, $x_1$ (lehenagoko *x* soila) eta $x_2$ (aldaketa-baldintzak betetzean sortua). Morfema asko ukitzen dituenean aldaerak, geruza zabala sortzen da; gogora, adibidez, latineko bokal laburren emaitzak azentudun eta azentugabeko kokaguneetan (gazt. *puerta/portal, cierre/cerrar*, etab.). Lege berankorragoek, analogiek edo gainerakoek desitxuratzen ahal dituzte alternantziaren hasierako distribuzio eta balioak, eta zail bilaka liteke familia bereko kide ziren elementuen berreraiketa formala eta funtzionala.[226]

Euskaraz, adibidez, *gatz* eta *gazi*-ren arteko lotura semantikoa eta alternantziaren legea edozeinek antzeman lezake —ez hainbeste *hats* eta *haserre*-ren artekoa—, eta, gainera, *corpus* > *gorputz* bezalako mailegu gardenak eta **naiza* > *naiz* (baina *naizateke* eta *balitz/lizate*) legezko kide morfologikoak ditu lagungarri. Zer esan, ordea, *hats, hatz* (cf. *hasi, hazi*) eta *hotz*-en aurrean? Azken honi tokatuko litzaiokeen **hozi* 'hoztu' ez da ageri (cf. B *otzitu* 'hoztu'), baina, *OEH*-n badira *hozi* 'germen que brota de un grano', 'tallo en las lechugas y otras hortalizas', 'pedúnculo que nace en la raíz' eta *hozitu* 'germinar, brotar', 'endurecerse (las cebollas)' eta 'adormecer la dentadura'. *Hotz* hauekin elkartuaz, batetik lotura formala eta bestetik esanahizko hurbiltasuna aurkitzen ditugu;

226. Batzuetan emaitza «nahasiek» eta «garbiek» salatzen dute fenomeno bat beste bat baino zaharrago edo berriago dela.

a) *solo / soro / zoru*… :
1) *l* > *r* berankorra;
2) errom. *s* > eusk. *s* (EZ *z*) berankor, baina (1) baino lehen.

b) *baradizu / paradisu / paraiso*… :
1) *b* > *p* berankor;
2) *-u* > *-o* berankorrago.

are gehiago, aurreko biak familia berean bilduaz, *bihotz* ere ez da orain horren bakar (cf. Lakarra prestatzen-1).

Kronologia absoluturako laguntza handiena —ez bakarra— idazkera eta testuek damaigute (cf. Campbell 2000). Pentsatzekoa da forma berria lekukotzen denerako aldaketa gauzatua dela, eta formen eta aldaketen lekukotze-hurrenkerak hizkuntzan bertan izan duten hurrenkerari lotuak diratekeela. Ez beti, ordea, batez ere corpusak orotara edo alderdiren batean urriak direnean; gogora Etxeparek aipatu adarrak edota 1619ko Elduaingo paskinetakoak: 'ikusten ez diren bekoki aldeko gizakien eranskin batzuk' ditugu horietan, nahiz diakronikoki pentsatzekoa den «zuhaitzen alboetako eranskinak» nahiz «animalia zenbaitek bekokiaren alboetan daramatzan eranskin handi edo txikiak» lehenago sortu zirela.

Aldiz, forma berrienak ez lekukotzeak ez dakar hiztunen ahotan ez zirela erabiltzen baieztatzeko segurtasunik. Hori da, esaterako, *-n-* > *-h-* (>*-ø-*) aldaketarekin gertatua Erdi Aroko dokumentazioan: berandu arte ez da islatzen eta ezta gero ere beti, prestigiodun grafia *-n*-duna baitzen (lat. *Asinarius* > [aseâri] baina <Azenari>).

Kronologia absolutuaren aldetik ere berri jakingarririk itxaroteko eskubiderik bada, baina batez ere kronologia erlatiboarenetik izan genezake esperantza handiena, segurtasun osoz esan baitezakegu agortzetik urruti dela, ia-ia hasi berritan, eta ondare zaharrari dagokionez ia hori ere ez; cf. /h/-aren ingurukoa Lakarra (2009b) lanean eta Egurtzegiren (2014: eranskina) orokorragoa. Bestalde, geruzak eta kronologia ez dira soilik gertakari fonologikoen jabego pribatukoak, horien aukerarik eta beharrik morfologian edo sintaxian ere baita, ikusi dugun legez. Horrenbestez, badira dagoeneko finkatutzat eman ditzakegun historiaurreko zenbait ezaugarri (erreduplikazioa, aurrizkiak) eta aldaketa (**d-* > *l-*, *T-* > *D-*, *-n-* > *-h-*, $*h_2/*h_3 > h_1$, aurrizki → atzizki…) eta horiek hurrenkera erlatiboan jar ditzakegu, honela hizkuntzaren geruzak argituaz eta kronologia zehaztuaz joateko. Forma kanonikoaren azterketak, hitz-familienak eta gramatikalizazioarenak ere lagun gaitzakete egiteko honetan (ik. Lakarra 2013b eta *passim*).

#### *4.6.6. Lexikoia berreraikiaz: I. Mitxelenaren berreraiketa eta haren lan etimologikoaz*

Arbelaizen (1978) liburuan, Mitxelenaren 1200-1400 bat etimologia aurki litezke eta, zalantzarik gabe, hori da oraingoz dugun euskal hiztegi etimologiko hoberena eta are jendaurrean aurkezteko moduko bakarra ere.[227] Horri gehitzen badiogu *FHV, Sobre el*

227. Geroztik Traskena, Morvanena eta Fornirena (gutxienez!) zabaldu dira sarean. Pena da lehenbizikoa egileak ia hasi baino ezin egina, nahiz bere gainerako lanak ezaguturik ez dirudien Mitxelenaren paradigma gainditzeko asmorik zuenik, funtsean hark egindakoa hobeki azaltzeko baizik; beste bien saioak hain dira barregarri eta baldar non hemen aipatze hutsa aski eta sobera

*pasado de la lengua vasca* eta egilearen beste hainbat lan («El elemento latino-románico», tartean), begi-bistakoa da badela hor euskararen historiaurrearen eta historiaren azterketa bikain baten sintesia eta, baita azalpen horretan jarraitzeko bidea ere. Horrela aitortu dute diakronista guztiek azken 50 urteotan eta oraindik hori da paradigma estandarra aitzineuskaraz, euskararen historiaurreaz eta beranduagoko bilakabide fonologikoaz.

Alabaina, § 4.1ean frantziar maisuaren tesiko pasartearen laguntzaz argudiatu bezala, Benvenistek bere aurreko aitzinindoeuroperaren berreraiketaz zioena hein handi batean Mitxelenaren lanari ezar dakioke; hara, esaterako, haren etimologiekin Arbelaizen bildumatik hartutako adibideok:

> **anai-(k)ide* (> *ahaide*), **anal-gabe* (> *ahalge*), **anan(t)z- / *enantz-* (> *a-ha(n)(t)z-*), **bat-gu* (> *bakhu*), **ba-ahal-dadi(e)n* (> *baldin*), **(a)bari ba(ga)-ko egun* (> *bariaku*), **barren-e-* (> *barne*), **bade* (> *bat*), **egaz-ki* (> *egazti*), **egu-(ren) egun* (> *eguen*), **e-nezu-n* (> *entzun*), *gaitz-ko* (> *gaizto*), **gau-haur* (> *gaur*), **gaztana/-e* (> *gazta*), **ge-ro* (> *gero*), **ibar-Ci* (> *ibai*)…

Arazoa edo akatsa, ez da zail antzematen: horko aitzinformen artean badira bisilaboak nahiz monosilaboak eta are polisilaboren bat ere, halaber, C- zein V-z hasiak, diptongodunak edo gabeak, silaba irekiz nahiz itxiz bukatuak, ia edozein fonema konbinaketa eta ordena… [228] *Fonética histórica vasca*-n ere (batez ere lehen argitalpenean) eta gainerako lanetako erroarekiko edo morfema-mailako erregelekiko ezaxola argia da; txistukarietan —cf. *FHV*-n aipatu *sasoi* < *sazón*, Etx. *cinhexi* > mod. *sinetsi*, etab., baina *sasoi-z* eta *sinetsi-z,* etab.— eta ozenetan —*elur/edur* < *eruR, belar/bedar* < *beraR* (baina *elurr-aren, bedarr-aren*)—, demagun, maila horretan kontsonante homorganikoen ezintasuna erakusten da, baina —azaleko ezberdintasunagatik edo (asimilazioa batean, disimilazioa bestean)— ez atal batean aipatzen da bestea eta ezta bietan den bilakabideen sakoneko ingurunea markatzen ere.[229]

---

den (ik. § 2.7 eta § 2.8.1 beren ahaidetasun-hipotesiez).

228. Aitzinhizkuntza ezberdinetako osagaien garaikidetasun falta ohiko erru eta arrisku dugu ikerketa-tradizio orotan; cf., esaterako, uralikoan: «The set of morphemes reconstructed in UEW is methodologically inhomogeneous. This means that, first, several chronologically adjacent periods —or levels, in terms of the family tree model— of the proto-language are included...» (Bakrò-Nagy 1992: 7).

229. Erroaren bilakabidearen eta hasperenarenaren arteko erlazioaz ik. Igartua (2002) eta Lakarra (2011a: § 8.2).

### *4.6.7. Lexikoia berreraikiaz: II. Ikerketa berriak etimologian*

Ez da AEren hiztegirik[230] ez eta ustez horko kide liratekeen batzuekiko proposamen eta, gehienez ere, azterketa solte zenbait baizen. Oso urruti da, beraz, AEren lexikoaren azterketa AE-ren fonologia edo are morfologiaz lortutakotik, ezinbestean horien menpeko baita, nonahi legez. Bestalde, hizkuntza bizi baten lexikoa zenbatekoa den eta nola egituratua jakiten zail bada, askoz zailago dukegu aitzinhizkuntza batena edo hizkuntza-egoera zahar batzuena (AEZ, AEM eta EBZarenak, esaterako) euskararen historiaurrea aztertzerakoan gogo dugun bezala eta beharrezko.

Gorago erakutsi bezala, Arbelaiz 1978 dugu —artean Mitxelenak argitaratu 1.200 ~ 1.400ekin— orain arteko etimologia-bilduma hoberena. Zifra horiek ez dute adierazten AEko berba ezagunen kopurua. Mitxelenak (aurreko hainbat ikertzaileren ondotik) dozenaka edo ehunka mailegu antzeman edo aztertu zituen (*asturu, busti, ereta, geben, hautatu, hogen, istil, langa, motz, orain*, etab.), zalantzarik gabe latinetik edo —gehiagotan— 2.000 urteko kontaktu etengabean izan den erromantzetik hartutakoak; ik. § 4.6.4 mailegu zelten urritasunaz. Halaber, interes berezia izan zuen beren forma hutsaren bitartez ere maileguak ezagutzen, hauek bideratutako berreraiketa ondare zaharra baliatuaz oinarri askozaz sendoagoetan burutzea baimentzen baitzuten (ik. Mitxelena 1957a-b, 1963, 1964, 1974 eta, bereziki, *FHV*).

Mitxelenaren berreraiketa zenbait berrikustean partez edo osorik mailegu ezezagunak zirela kausitu dugu: *alu* 'cunnus' < lat. *aluum*, *zemai* < gazt. zah. *menaza*, *hezur* (< **enazur* < **bernazur*), *belaun* (< **berlaun* < **berna-bun*), etab. Kontrakoa askozaz arraroagoa da: *adar* —nahiz eta Mitxelenak (1964a) eta Gorrotxategik (1987b) beste edozein eremutakoen antzera ezarri iragazkiak gainditu ez— inoiz zelta mailegutzat aurkeztu izan da; alabaina, zeltaren aldetik ere arazoz jositako azalpen atomista hori (ik. De Bernardo

230. J. Manterola eta I. Segurolarekin batera —eta G. Fraile eta K. Segurolaren laguntzarekin azken garaian— prestatzen ari garen *Euskal Hiztegi Historiko-Etimologiko*-aren (*EHHE*) lehen emanaldiak 2.300 bat sarrera izango ditu, 200 familiatan antolaturik. Egitura modularra du, aurretiaz letra bakoitzeko portzentaia hainbat irizpideren arabera finkaturik: hitzen lehen agerraldia, dialekto-hedadura, lekukotasun idatziak, erabilera modernoa, familiaren emankortasuna, etab. —izan litekeen bibliografia eta letren (= hitz hasierako hotsen) hizkuntzaren historia fonetiko eta morfologikoari lotutako errentagarritasun historiko-etimologikoa—, zeinak bertoko zein kanpoko antzeko lanek baino *EHHE* osoaren hazkunde harmonikoagoa ahalbidetzen duen. Euskal gramatika historikoaren egungo egoeraren araberako aitzinamenduez landa, irakurleak bertan aurkitu ahalko ditu *OEH*-ri buruzko beste hobekuntza batzuk aztertutako hitzen historiari dagokionez, dela Erdi Aroko lekukotasunei eskaini arretarengatik —aukera ere hobea zen hiru hamarkadatan hamar bider lekukotasun gehiago baitira eskuragarri—, dela eratorrien azterketa formal eta semantiko zehatzagoagatik.

2006 eta Lakarra 2003 eta hemen 237. oh.). Homofonia hutsezko azalpenak ez zuen urrutiago joaterik eta are onartezinagoa bilakatzen da hitz horretan den AEZn hitz-eraketarako usuko zen erreduplikazioa *adats, eder, odol, ahal, ohol*… eta beste hainbaten ere errepikatzen dela ohartzean (ik. §4.1). Orobat, Mitxelenak jatorri ezagunik gabe, arrazoi formalengatik, mailegutzat jotako batzuei (*dollor, abagadaune*) etorki zehatza —ik. Corominas & Pascual (s.u. *trollo, vegada*)— lortu eta beste berri batzuk mailegutzat irizpide formalengatik ezagutu daitezke edo jatorria bilatu ahal izan zaie: *eskatu* (< lat. *uescor*), *alu* (< lat. *aluu(m)*), *esker* (< lat. *uester*)…; cf. Lakarra (2003, 2012).

Mitxelenaren etimologien artean beste talde handi bat AE ondoko eta are —gutxienez— akitaniera ondoko konposatuak dira: *bariku* (< _*abaribagakoegun_), *erdara, gosari, izurde, lotin, orkei, sorburu, umerri, zuhaitz*, etab. Horiei beste asko gehitu behar zaizkie, bai gero aurkituak (*agiri, esne, usain*), bai bistakoak izanik aipatu ere gabeak (*burhezur, okin, itaurre, esparru*… guztiak ere akitaniera ondoko hitz-eraketa ezaugarriekin). Berreraikitakoaren barruan gutxi da, orain arte, AEko hiztegian segurtasunez koka daitekeenik, eta gehienak geroztik berrikuntza larriak pairatu ditu edo are mailegu-geruza ezberdinen bitartez iritsia dugu.

Gauzak are garbiago dira erro soilak bilatzen baditugu; ikusi dugunez (§4.1), Uhlenbeckek eta Mitxelenak esandakoaren aurka, erro zaharrak ez ziren bisilabikoak, monosilabikoak baizik, CVC egiturakoak zehazki. Horrenbestez, *hortz, bortz, sabel, samin, gizen, gihar, labar, labur* eta *zezen, eder, gogor, ohol, ahal*… AEko hiztegian bide ziren bai, baina ez (hasieran bederen) erro soil gisa, baizik eta eratorri moduan, [Erro + Atz., Aurr. + Erro], nahiz forma erreduplikatu legez. Hori bera jazo zen CVC-CVC konposatuekin ere: hara akit. *harbel* eta soilik gero lekukotutako *berdin, gordin, zurgin*… seguruenik, ez *zaldun*, < _*zal-di-dun_; cf. *zaltoki*, etab., Erdi Aroko edo akitaniera ondoko lehen osagaiko aldaketa ezagunekin.

Gorago (§4.2 eta §4.4.3.2) zirriborratu dugun erroen eta morfemen forma kanonikoaren azterketak oraintsu arte eskura ez genuen metodologia formal boteretsua ematen digu euskal lexikoaren bilakabidea ikertzeko eta, horrenbestez, bere garairik zaharrenetan izan zitezkeen egiturak edo historiaurrean pairatu egitura-aldaketak antzemateko. Beren AE-izaera historikoki lekukotutako hitzei segurtatzeko testu faltan —definizioz, inongo aitzinhizkuntzatan ez da lekukotasunik—, bada beste zenbait bide (guztiak ere arazotsuak, noski) fonologia eta morfologiatik eskuratutako informazioa baliatuaz: badirudi, esaterako, erreduplikazioa AEZren ezaugarri bat dela baina ez AEMrena eta, beraz, *odol, eder, zezen, ihin(tz)* eta enparatuak lexikalizatuak edo egiteko bidean zirela AEren bigarren garaian: izan ere, _*d- > l-_ Mitxelenaren AEn (K.a.-ko azken mendeak baino lehen) jazoa zen, dakigunez, eta ez da dagoeneko _*lVC_-n oinarritutako erreduplikaziorik: **$lV_1rV_1C$: _lur > **luruR / **luRuR, lats > **lalats_ (cf. _*dats > *(d)adats > adats_).

Aldiz, *(k)okots, akats* baditugu, **kots, *kats*-etik **dVC* edo **nVC* ugarietan bezala, esan bide genezake oraindik **T- (k-, t-) > h- (ø)* gertatu gabe zela. Orobat, *ethorri, ekharri, ikhusi, ekhin* ditugu, baina ez ***ehorri, **eharri, **ihusi, **ehin* nahiz ***etorri, **ekarri, **ikusi, **ekin* hasperena gorde den euskalkietan; hau azaltzeko modurik errazena Martinet-Mitxelenaren teoriaren barruan zera genuke: aditz-enbor zaharrak (**e-* [> *i-* / *j-*] dutenak), AEZn **Th- > h-* (> ø-) erregelaren aurretik eratu ziren, ez AEMn edo beranduago (ik. § 4.4.6.1).[231]

AEn, aurrizkiak ISn ere baziren (ez bakarrik ASn euskara historikoan bezala), ez jakin noiz arte: pentsatzekoa da zenbat eta geroago orduan eta lexikalizatuago zirela, historikoki atzizkibidea zelarik hitz berriak sortzeko bide bakarra, konposatuez gainera. Erreduplikazioekin gertatu bezala, aurrizki-bidezko eratorpena ez zen hedatu mailegu latindarretara —ezta zaharrenetara ere (***la-bake, **gi-lege*, ***sa-zamari, **le-eleiza…*)— eta, beraz, pentsatzekoa da ordurako biak agortuak zirela. Baliteke, hortaz, **sa-, *da-, *la-, *gi-, *za-* eta gainerakoen bidez hitz gehiago ez sortzea dagoeneko AEMn eta *sabel, labur, gizen, zabal, samin, gizon, zabar*-ek… hiztunak lehenagoko bi zatien ezagutza galdu eta esanahi sintetikoa hartu izatea —gogora munda eta tani hizkuntzetan ere badirela aurrizki fosilduak, haiek ere atzizkiberak diren arren euskara historikoa bezala (cf. Donegan & Stampe 2004)—.[232] Nolanahi ere, AEMren azkenerantz gertatu bide zen lexikalizazioa, beranduago ez bada: izan ere, horietako aurrizki zenbait atzizki moduan ere (*-gi/-ki, -za, -de, -da/-t*) aurkitzen baititugu historikoki; gogora Australiako zenbait hizkuntzatako eta munda taldean gertatu fenomeno berbera. Hau ezinezkoa litzatekeen beren lotura (fonetikoa eta semantikoa) hitzberriaren barnean erabatekoa izanez gero, baina ez, aldiz, benetako aurrizki huts bilakatu baino lehen preposizioak ziren bitartean.[233]

231. Erregela hori AE ondokoa da eta *erein* edo *herio* bezalako *er-* aditz zaharrak direlarik (eta honek **d- > l* eskatzen), pentsatu behar dugu zenbait aditz oraindik AEMn sortu zela, baina ez askoz geroago, ez baita bakar bat **e-* oinarri mailegatu bati ezarriaz eratua. *Ezagutu* —izatez *ezagun* da forma zaharra eta hori urrunago gelditzen da Schuchardtek buruan zuen jatorritik— eta *entzun,* biak azaltzen dira ongi hizkuntzaren barnean.

232. Alabaina, bada bereizi beharra erreduplikazioaren eta aurrizkien iraupenaren artean: gorago ikusi dugunez (§ 4.6.1 eta § 4.1.d2) lehendabizikoa agortua zen arren **d- > l-* gertatu aurretik, *sa-* aurrizkia, aldiz, bizirik zen oraindik, *sarats *datz > *latz* eta kontsonante homorganikoen aurkako asimilaziotik baitator; gehi bekio honi testuan aipatu preposizioen leku-aldatzea (ik. Lakarra 2015b)

233. Hori bera gertatzen da *-le* (< **le-*) atzizkiarekin: *d > l* soilik hitz hasieran gertatu zen euskararen historia(aurrea)n, /l/-ren berezko tokia $C_1V_2$ $C_2$-ren barnean $C_2$ zelarik eta, hortaz, soilik erregela fonologiko hori gertatu ondoren igaro zen preposizioa postposizio izatera (berranalisiz, agian).

AEkotzat jo ahal bide ditzakegu zenbait animalia-izen edo gorputz-zati ez, noski, forma historiko horietan: *ahuntz* (< **han-hun-tz*), *erle* (< **hez-le*), *bele* (< **bel-le*), **ze-zen, *zo-zo, zaldi, ardi, idi* (< **e-da-ra-din, *di-din, -n* erorketarekin bietan)*, ahardi* eta, beharbada, *behi* > **behe-di* eta *behor* < **behe-hor*: *hor-tz, mihi* (< **bin-i*), *arrain* (< **arran-i* < **e-da-ra-don-i*), *arrano* (*< *arran-no*), etab. Guztietan aurkitzen dugu ezaugarri morfologikoren bat hala baimentzen duena: erreduplikazioa, aditz-aurrizki fosilduak, klasifikatzaileren bat (**ha(n)-*), historikoki fosildu atzizkiak…

Aspaldiko ideia da *b-* aurrizki fosildua dela hainbat gorputz-atal izenetan; hori zuzena balitz, hitz horiek guztiak AEkoak lirateke. Alabaina, ikusi dugu *berna* mailegu ezagunaren gainean osatua dela *hezur* eta baita *belaun* ere. Horrezaz landa, *bare, buru, begi* edo *beso*-k arazo larriak dituzte forma horretan AEZ izateko beren egituragatik: CVCV dira, VCV *b-*[234] aurrizkitzat jotzen badugu eta, gainera, *-gi* eta *-so* atzizkiak ere hor dira azken bietan, erakutsiaz VCV hori ere lillura berantiarra dela. *Beharri*-k, *behazun*-ek, *bekoki*-k, *behatz*-ek, *barrabil*-ek eta bestek konposatu-itxura nabarmena dute, egitura gardenekoa, gainera, eta nekez defenda genezake AE direnik *-n-* > *-h-, -g* > *-k* edo *-e/-o* > *-a* aldaketa horiek aldean. *Atzamar* edo *erhi* are berankorragoak dira: lehena ezin izan liteke ***hatz* + *hamar*, ***hazkamar* edo baikenukeen (cf. *askari* < **hats* + *hari*, Mitxelenaren **arrats-* baino hobe) eta, batez ere, *hamar* ezker doalako, ez eskubi (cf. *amarratz*);[235] *erhi her-i*-tik dator, *hVR (l,n,r)-* > *VRh-* metatesi aski hedatuarekin (*heri*, aldiz, erromantzetik, *h-* eta guzti *hVR-* > *VRh-* igaro eta gero): cf. gask. *hala* > *alha,* etab., ondare zaharreko *onherran, onhetsi* eta gainerakoak bezala (cf. § 3.2.2). Ezinbestean bilakabide hauek oso berankor (Erdi Aroko) izan behar.

#### *4.6.8. Familia lexikoak*

Beste aitzinhizkuntza askoren berreraiketan bezala —ik. adib. Sagart (1999) eta Schuh (2013) aitzintxineraz eta aitzinhausaz, hurrenez hurren—, hitz-familiak oso lagungarri gerta dakizkiguke AEko lexikoaren berreraiketan edo geruzarik zaharrenen ezagutzan. Edozein ikerketatan, arin eta axalekoa izanik ere, konposatu eta eratorriak eskuratzen

---

Erkatzen baditugu *-le* eta *-gin* atzizkien bitartez eraturiko lanbide-izenak (*ikhusle, jasale, ekharle, ethorle, eramale… okin, zamargin, urregin, teilagin, umagin…*) ageriki *-le* (gero *-tzaile*) baino ez da erabiltzen aditz zaharrekin, ez *-gin*.

234. Gainera, *bere/ere, bortz/ortzegun…* bezalako bikoteak ere kontuan hartu behar dira.

235. Beste jatorriren bat bilatu behar, bada, *hatz x zarpa* adib. [*harpa* hobesten du B. Ariztimuñok]; cf. (?) *-r*-ren eskubi muturrerako metatesiarekin dagoeneko aipatu *dollor* < errom. *trollo*, etab.).

dizkigu, eta hainbat eta gardenago dira zenbat eta oinarriak handiago izan, zenbat eta gehiago errepikatu hizkiak eta konposatuetako osagaiak gehiagotan lekukotu:

a) _baso_ > _Basauri_ (topon.), _basa-ti_, _basa-mutil_: < _-uri_, _-ti_, _-mutil_
b) _gizon_ > _gizarte_, _gizontxo_, _gizaldi_, etab. < _-arte_, _-aldi_, _-txo_
c) _bel_ > _goibel, harbel, horbel, ubel_ < _goi, harri, horri, ur…_

Zailtasunak areagotzen dira oinarrien tamainak txikitzen direnean edo hizki eta erroak hizkuntza modernoan emankorrak ez direnean; halaz guztiz, ez dira nahasi behar hondarrak (gainerako guztia modu hertsian isolatu ondoren gelditzen dena) eta erro edo hizki berriak (hauek ere ontzat eman baino lehen iragazki horiek berak gainditu behar baitituzte):

d) _barru, barren_ < _*bar_ + X _(= -u)_ / + Y (= _-n_); _okher , puzker, akher_ < _oin-X, butz-X, *han-X_ (X = _kher)._
e) _beltz_ <_*bel_ + _-tz; gibel_ < _*gi_ + _*bel_; _bular_ < _*bur-bar; ibar_ < _*ur-bar_.
f) _hortz_ < _hor_ + _-tz_ 'ADJ' (cf. _can-ino_), _bortz_ < _*bor-tz_ < _-tz_ 'ADJ' (cf. _quin-que_); _gizen_ < _*gi_ + _*zen_.
g) _otso_ < _*hor-tz-so; zilbor, enbor_ <_*zur bor, *en-bor; zezen_ < _*ze-zen_.
h) _sa-mur, sa-min, sa-bel…_ < _sa-_ + _*bur, *bin, *bel…_
i) _odol_ < _*do-dol, gogor_ < _*go-gor_; _eder_ < _*de-der, adar_ < _*da-dar…_

Teknika honek eman diezagukeen laguntza hori ez da agortu oraindik, azken urteetako lanean ikus genezakeen bezala:

a. lehendik ezagutzen genituen familiak zabaldu dira: _-bel-_ oinarriari eta _ubel, orbel, harbel_, etab. bere sateliteei _sa-bel_ eta _gi-bel_ gehi diezaizkiogu; orobat, _hor_ oinarri duen sarean _hortz, otso, ogi_, etab. erants litezke;
b. erro berriak ezagutu ditugu: _*han, *bur, *dos_: cf. _handi, akher_ (< *_hankher_), _ahuntz_ (< *_hanhuntz_); _labur, samur, bur-u_ (cf. _larr-u, urr-u-n/ti_), _urr-i_; _(h)andots, ordots, bildots, josi_ (< _*e-dos-i_);

Honezaz landa, familia lexikoen barnean ikus litezke inon baino hobeto hitz-eraketarekin lotutako prozesu morfologikoak (cf. § 4.1.3.d):

| | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|
| _*dar_ : | _adar_ | _indar_ | _lar_ | _jarri_ | _inar/txilar_ |
| _*dats_ : | _adats_ | _aldats_ | _lats_ | _jatsi_ | _arrats_ |
| _*din_ : | _idi_ | _berdin_ | _*e-lin-o_ | _jin_ | _*eradin_ |
| _*dol_ : | _odol_ | _ozkol_ | __ | _jori_ | _erori_ |
| _*dur_ : | __ | _andur_ | _lur_ | __ | _inurri_ |

Aurrizkiak aditzean eta izenean, erreduplikazio oso hedatuak (soilik izenean, halere), historikoki fosilduriko atzizkiak, aldaketa fonetiko oso zaharrak hasiera absolutuan, baina ez erdikoan edo 2. osagaiarenean, etab. Honelako gertakariek eragiten diete erro zaharrei, sare tupituak osatuaz, eta duela mendeak eta are milurtekoak agorturiko fonologia eta morfologiaren inguruko zehaztasunak ematen dizkigute. Ezinezko da maileguak era horretako sareetan bertakotzea edo antzekoak beren inguruan eratzea, eta, azkenik, etimologiak egiteko oinarri sendoagoak ematen dizkigute:

dar : (C)in-dar : lar : larr-i : jarri (< *e-dar-i), etab.
hor : hor-tz : hor-i : ogi < hor(i)-gi, etab.
har-tz : harr-i : (h)arr-e.

Hots, ez da eragozpen formal ez semantikorik _hartz, harr-i_ eta _arre_ (< _*harr-e,_ cf. _atz_ < _hatz-e-C, Parise_ < _Paris-e-C_) familia berekotzat jotzeko eta bai, aldiz, ondorio horren alde egiten duten paralelismo eta bat etortze ugari, baita hizkuntzatik kanpo ere: (ikusi dugunez, cf. § 4.6.4) IE hizkuntzetan 'hartza' bere zaletasunengatik ('ezti-jale') edo bere koloreagatik ('arrea') eta honela gertatu da euskaraz ere animalia horren izenarekin.

Bestalde, Trombettiz geroz _harri_ mailegutzat hartu ohi da, _*kar_ Erteuropako erro toponimikotik hartutzat, zehatzago, baina ik. supra § 4.6.4 erroak beren artean edo erroak hitzekin erkatzearen arrisku eta desegokitasunaz mailegu-azterketan. Badira oraindik beste bi arrazoi _harri_ zein _*kar_ beste edozein substratuko erro batetik deribatzeko:

1. _harri_ CVC-i analiza daiteke, _hor-i_ < '*horaren koloreko' edo _zur-i_ < '*zuraren koloreko' nahiz _e-thorr-i_ edo _e-kharr-i_ bezala; hots, partizipio baten aurrean gara. Markagarria da, baina ez dut _harri_-ri buruzko bibliografian horretaz ezer aurkitzen, hau litzatekeela kasu bakarra zeinetan hizkuntzan _-i_ hartu duen mailegu batek; are gehiago: hori bera gertatzen da _-tz_ markarekin;
2. _har-_ < _kar_ ontzat emateko fonetikaren aldetik, bortitz batetik abiatu behar genuke (_*Tar_: dela _*th-,_ dela _*kh-_), baina oso froga urriak ditugu maileguetan bortitzetarik ateratako hasperenak direla baieztatzeko; aldiz, horietan ehunka dira _p-, t-, k-_ > _b-, d-_ (> _l-), g-_ bilakabidea pairatu dutenak. Gauzak honela, _harri_ mailegutzat hartzen duen hipotesia ezin dugu ziurtzat jo eta, alderantziz, askozaz egokiago da formalki eta errentagarriagoa azalpen-boterearen aldetik ondare zaharreko familia zahar baten gunetzat hartzea (cf. _ekharri_ : _har_ eta Martineten Legea, § 4.3.6n). [236]

236. _Adar_-en historiak ere (ik. testuan § 4.6.7) sare eta familia zabal eta tupituetan hurbilketa atomistak duen ahulezia erakusten du; cf. Garland berebereaz. Bidenabat, _bear_ 'hartza' IEn

### *4.6.9. Familia lexiko gehiago eta zabalagoak berreraikitzeko*

Aspalditik ezagutzen genuen, —ikerketa sakonik jaso ez arren— euskara zaharrean bazela *-n / -r / -ø* alternantzia bat, euskara historikoan bikote gutxi batzuetan (edo, are urriago, hirukote edo laukoteetan) gordetzen zena; gutxi bai baina oso interesgarriak dira euskal lexiko historikoan geruzarik zaharrenetan kokatutako familia isolatu hauek: *oihan* / *oihar-*, *hoin* / *orpo*, *egun* / *eguraldi* / *eguberri*, *jaun* / *jauregi*, *ja(u)be*…

Geroago, Mitxelenak ukitu zituen zenbait aldiz horietako batzuk *-r* → *-l* bilakabidearekin loturik, nahiz mailegu latindar-erromantzeetan gertatutako **-l-* > *-r-* erregela zaharragoaren ordena bihurketatzat azaldu: *zamari* > *zamalzain*, *abere* > *abel-etxe*, etab. Alabaina, baiezta daiteke *-r* → *-l* ondare zaharrean ere jazo dela eta geruzarik zaharrenetan gainera: *estari* < **hertz-hari* → *estal-, bidari* < **bide-hari* → *bidal, euskara* < **-hara* → *euskal-*, etab. eta *estali, bidali*, etab. ezin izan zitezkeela zaharrenak, *estar-i* eta *bidar-i* baizik, ezta zaharregiak ere, *-l-* > *-r-* modernoagoak (akitaniera-ondokoak) itxuraldatuko baitzuen; gainera, ordurako *-i*-ren bidezko partizipio-eraketa agortua zen, latindar mailegurik zaharrenetan ere ez baita gertatzen. Arestian (Lakarra 2015a) beste alternantzia bat aurkitu izan da (*-r*/*-h*) beste zenbait familiatan *hor* / *ohalano, ohara*; *hur* / *uhalde*, *uharte*.

Orain arteko alomorfo-eredu guztiak aurkitzen dira *su* hitzean —*su-te, sur-tan, suhi*/*suin* (< **sun-i*), *Sunberri* (topon.)— eta beste zenbaitetan; are gehiago, hauetan /i/ bokalismoa dugu eratorri /u/-z landara, *hur*-en familian dagoeneko ezagutzen dugun (*hibai, ibar, idor*…) moduan.

*EHHE*-rako *zur*-en familia erraldoia aztertzerakoan (130 bat sarrera nagusi), ondoko alomorfoak finkatu dira: *zur, zun, zuh-, zul-, zut-, zu-, zi-, zih-, zir-, zil-, zin*: cf. *zuzun, Susunaga, lertzun, zuhaitz, zuhamu, ziri, zihi, zilhegi, zin, zindo, sinetsi* (< Etxep. *zinhetsi*), etc.;[237] honek adierazten du ondare zahar osora hedatzea beharrezkotzat jotzen dugun ikerketaren garrantzia AEko eta geruza zaharretako lexikoaren berreraiketarako.

Hasiera batean ezagutzen genituen alternantzia fosilduak hitz horien akabuko kontsonanteetan (-C) gertatzen zirelarik eta hitz horiek bisilaboak edo monosilabo diptongodunak zirelarik, eta kontuan izanik erregela fonologiko asko morfologiko

---

'ekarri' esan nahi duen aditzarekin lotua omen zen eta, beraz, haren jatorria euskarazko *hartz*-etik oso gertu zatekeen; cf. **khar* : *e-kharr-i* > *har-i(tu)*, *harr-i, (h)arre*. *-r* / *-R* bikote gehiagotarako, cf. *sari* / *sarri*, *zori* / *zorri*, etab.

237. Badirudi *-i-* bokalismoa eratorririk zaharrenei dagokiela eta *-u-* asko gero oinarrizkoarekiko analogia edo kutsaduraz «berrezarri» direla, batez ere oinarrizkoak bizirik eta usukoak direnean. Horrela *hur*-en familian, esaterako: cf. *ibar, ibi, hibai* baina *uhalde, ubide*… Ez bide da halabeharra, noski, /i/-dunak izatea ezezagunenak eta fonosinbolismo gehienekoak: cf. *zirin, zirtzil (< zir-zil), ziztrin* < *zur*.

bilakatzeko «barnetik kanpora» garatzen direla, «euskal Grassmann» delakoarekin —1. *oh-* < **hoh-* < *hor*, 2. *ilherri* < **hil-herri*— edo txistukarietako homorganikoen aurkako hertsapenarekin —1. *zotz* (***zots* / ***sotz*), 2. *sinhetsi* < *zin-hetsi* (cf. Etxep.)—, arestiko lan batzuetan (Lakarra inpr.-1) nahi izan dugu ikertu zer aurki genezakeen lehen begi-kolpe batez antzinako konposaketa edo eratorpenetako lehen osagaiaren azken -Crekin. Lehen emaitzak itxaron baino aberatsagoak izan dira eta bultzatzen gaituzte pentsatzera aurreko garai batean (AEn) delako alternantzia horiek ez fosildurik eta bazterturik gero bezala, baizik eta lexikoi osoan zehar edo horren zatirik nagusienean bederen hedatzen zirela.

Hara zenbait adibide: *ban* / *bar-* / *bal-* (*m-* eta *ø-* aldaerekin: cf. *baldi* : *aldi* : *maldi*), *bon* / *bor-* / *bol-* (id: cf. *borda* : *olde* : *mordo*), *gan* / *gar-* / *gal-* (*igan* : *garbal* : *galde*), *gor* / *gol-* (*gorri* : *golde*), *sar-* / *sal-* (*sarri* : *saldu*), etab. Berreraiketen segurtasuna -Cko txandakatzeen erregulartasunaren menpe dira baina baita asko laguntzen dute beste era bateko informazioek, esaterako morfema gramatikalen bilakabideak: lehen osagaiko C-k (*b-* / *m-* / *ø*, adib.), atzizkiaren edo 2. osagaiko T-k (ahostun edo ahoskabe: *-da* / *-ta, -de* / *-te, -do* /*-to*, etab.) eta are morfema horien edo 2. osagaion adiera zahar ala berriak diren. Horrenbestez, azterturik ezkerreko monosilaboaren akabuko alternantziak —gehi **b-* > *ø* eta **b-* > *m-*, eta zenbait atzizki ezagunen gramatikalizazioaren historia— *ban* / *bar* eta **bon* / *bor* familien berreraiketatzat hurrenez hurren, lortzen dira zehaztasun berri erantsiak aldaketa fonetikoen kronologientzat eta baita lehen kontua izan gabekorik AE ondoko /m/-ren jatorriei buruz ere.

Geroagoko hainbat aldaketa fonetikok erroaren kokagune ezberdinetan, eratorrietako analogiak eta oinarriekiko berrezarpenak, fosilizazioak eta atzizkietako aldaeren ugalketak gehi esanahi-aldaketek lehenik familiako kideen artean urruntasuna areagotu zuten eta erabateko etena gero, hiztun modernoak edozein erlazio antzemateko gai ez direlarik.

Gertakari honek ez gintuzke harritu behar: hiztun modernoarentzat ez da loturarik (zuzenik bederen) *sarri* 'tupitu' eta *saldu*-ren artean eta baita, beraz, noizbait lehendabizikoaren eta *salda* 'zopa tupitua, ez likido hutsa' edo *saldo* 'talde, gudaroste, samalda'-ren artekoa ere; are gehiago, *sarri* 'tupitua'-ren eta *sarri* 'laster'-en artekoa ere ez da bistakoa mendebalekoentzat eta ezta *sarri* 'askotan'-ena ere ekialdekoentzat.

Etorkizunean aurreko paragrafoetan zirriborratua beste hainbat familiatara hedatu beharko da zehaztasun eta sistematikotasun osoz: Lakarra (2010a)-n *bi* '2' < **gwi* < *goi* 'goiko partea' berreraiki zen, zenbakien eraketaz genekienaz fidaturik batez ere —usuenik hatz lodia alde batera uzten zen sistema gehienetan eta, beraz, bigarrena (erdikoa) da handiena ere—; cf. *zubi, azpi, garbi, ibi*, eta gainerako kognadoak.

Gero (cf. Lakarra 2016c) ikusi dugu aurrekoei *bide*$_1$ 'iz.', *bide*$_2$ 'seguruenik', *bider, bihotz, bizkai* 'topon.' eta beste asko gehitu behar zaizkiela (batzuk **b-* > *ø*-rekin *izter*

bezala). Baina delako **goi* hori modernoegia da, -C gabe, diptongoarekin eta, gainera, *-i* ezagunarekin; bistakoa da hau errebisatu beharreko berreraiketa dela. Gainera, badugu **bun* erro bat ezkutaturik *mun, muin, muno, muño, ilhun* (< **hil-bun*), *(g)un(e), (barr)-u, (larr)-u, (urr)-u-(n/ti)* eta, beste zenbaitetan, seguruenik; azkenik, txandaketan sartzen direnen zerrenda hedatzen da *-bur*-en sateliteetara: *labur, samur* eta, beharbada, baita *apur* eta *urri*-ra ere.

Ikusitakoaren ondoren zilegi dirudi familia askoz handiago batean biltzea *bi-*, *bun-* eta *bur-*, *bin* (cf. *erpin* < **herdi-bin*) laugarrena, *bir-* (*biri(ki), birr-*) bostgarrena, *bih-* (*bihurtu*, *bihar*) seigarrena eta are *bil-* (*bildots* 'cordero', *bildur* 'miedo') zazpigarrena ere: cf. *zur, hur* : *zi-, i-*. Lehen baino arrazoi gehiago genuke **bur-u* analizatzeko, *bur-* ez baita soilik *buru* bisilaboak akitaniera ondoren eratorpen-konposizioan -V altuak erortzerakoan hartzen duen forma (*idi* > *it-*, *ogi* > *ot-* ezagunetan bezala); ez da horrelako ezer *labur* eta *samur*-en eta nahiz *bulhar*-eko (< **bur-bar*) *-l-* r-R antihomorganikoen aurkako disimilaziotzat har litekeen (cf. Lakarra 2002b), ez da horrelakorik *golde*-n (cf. §4.6.1) edo *zilhegi*-n (< *zur*). Hortaz, *bildur* (gehi *bil(h)ar*, *bul(h)ar*-en aldaera ere) familia honetarako hautagai honak dira, erlazio semantikoen bitartez (*bilhar/bulhar* < **bur-bar* '*buru azpian'; *bildur* < **bur-dur* '*burua lurrera') eta baita lege fonetiko erregularren bidez ere.

Hemen gain-gainetik ukitua ez da era honetako berreraiketaren boterearen hasikin eta erakusgarri baizik; argi da soilik iragazki filologiko egoki eta hertsiak ezarri ondoren luzatu ahalko dugula lexiko osora erro zaharren CVC forma kanonikoan oinarrituriko analisia; nolanahi ere den, hemen aipatu baino gehiago dira aurki litezkeen -C alternantziak —gainerako morfemetan beste aldaketa formal eta semantiko zenbaitez lagundurik— eta baita, noski, haietarik atera bide litezkeen ondorioak alternantzia arkaikoez.

#### *4.6.10. Zenbait alor semantiko*

Gorputz-atalen alorra eta zenbait animalia-izen ikusi ditugu gorago. Azkenetan *hor* CVC zaharra eta, itxuraz, *zakur*-en CV-CVC *za-* aurrizkiarekin eta **gur* erroa (cf. *egur, makur, gurtu*) —mailegu eta zehaztu gabeko substratutzat ere jo izan da eta oso garai diferentetako, noski, batera ala bestera izan—, *katu* mailegu berri edo «berritua» (*catu(m)* > **gatu* > *katu*), ezkerreranzko asimilazio ezagunarekin (cf. *kalte / galdu*); *behi* eta *behor*, aldiz, (Holmerrek aspaldi iradoki zuen bezala) *behe*-ren erro berekoak izan litezke eta *zerri*-k ere *CVC-i* du eta *bigantxa* lat. *bimana*-tik datorren mailegua.[238]

---

238. *Urde*-ri buruz, ezer esatekotan, bere egitura horretan AE zaharra ezin izan litekeela nabarmena

§ 4.4.4an adjektibo-kategoria autonomoaren falta dela eta ikusi dugunez, koloreen alorrean ez da CVC soil bakar bat ere: baditugu eratorriak (*bel-tz*), partizipioak (*zur-i, gorr-i, hor-i*), konposatuak (*urdin*), erlatiboak *beilegi* (< **behi-ledi(n)*) eta maileguak (*azul, berde, marroi, laru* < lat. *clarus*…); hots, Dixonek (1977) adjektibo-kategoria gabeko edo urriko hizkuntzetan aurkitutako ordezkatze-bide berberak aurkitzen ditugu euskaraz, eta hori koloreen saila unibertsalki adjektibotasunaren hierarkian oso gora delarik.[239]

Ahaidetasun-izenetan gutxi da *-ba* eta *-so* atzizkiez landa ezagutzen duguna (bigarrenaz ik. Lakarra 2013b), duela 90 urteko Bährren lanaz geroztiko aurrerapenak urri izan baitira: *sehi*-k dagoeneko ezagun dugun *-i* atzizkia du eta SENI, SEMBE (azken zatirako cf. OMBE) lekukotzen dira akitanieraz eta SENHAR Lergako idazkian; idazki horietan da CISON ere (< **gi-zon*, cf. *zohi* < **zon-i* eta Ernout-Meillet s.u. *homo/humus*) eta *ama* eta *aita* haur-hizkuntzatik datozelarik, kide ugari dute ia mundu osoko hizkuntzetan.

**Sen*-ek ez du izartxorik behar *sen-do/sen-to* orokorra eta, batez ere B-Gko *sen*-en «buen juicio, sensatez, razón, buen sentido; destreza, pericia, habilidad; nota, marca, señal; sentido corporal; estado; estado normal; instinto; carácter; temple, sazón», —beharbada, sintesi on bat «hazkuntza», «hezkuntza» litzateke— izanik; lehena lat. *exemptus*-etik atera nahi izan da (cf. *FHV*) baina ez formak (zergatik *s-* ?), ez esanahiak, eta ezta *exento* eta familiaren historiak (ik. Corominas & Pascual, s.u.) ez zuten hipotesi hori laguntzen; orain *-do/-to* atzizkiaren jatorriaz ik. Lakarra (2013b), eta *sen* erroberreraikiari *sen* historikoa gehi diezaiokegu hura osatuaz. Badirudi latineko (Ernout-Meillet) eta erromantzeko (cf. Corominas & Pascual, s.u.) *criar/crear*-etik oso gertu zela oinarrizko esanahia: 'sortu', 'umeak izan' baina baita 'hazi', 'zaindu', etab.; horrenbestez, hasiera batean *senide* ez bide zen 'familiako' baizik eta 'bateratsu sortu eta hazia'.

Ia lehen bezain zail darraite gainerako ahaidetasun-izen gehienek: Haritstxelharrek **aita-/ama-ginar(re)-ba* azaldu zituen, *-gi-* horrek 'haragi', 'odoleko' balioko lukeelarik; alabaina, beste askotan legez (*lagun, hagin, hogen, negu*…) *-g-* hori ez bide zen erroaren alomorforik zaharrenari dagokiona, Erdiaro berantiarrean ahostun baten erorketak sortu hiatoa betetzearren are geroago erantsia baizik. Hots, lehenagoko **-din-* baten ordez edo bide genuke (**aita-/ama-din-arreba*). Bestalde, ohar bedi *-ginarreba* hori gizonezko nahiz emakumezkoari ezartzen zaiola eta, beraz, *arreba*-ren esanahi zaharrean ez zela 'emakume'

---

da; lat. *turpis*-ekin lotzea pentsatu izan den arren (Lakarra 2009b) arazo formalak larriegiak dira eta ez da *urdan-* aldaera ahaztu behar: cf. orobat *nekatu* > *neke* edo *eho* > *ehe*, aditzetatik abiatutako atzeranzko eratorpenak.

239. Tani hizkuntzetan ADJ kategoria hartzen dute isolatzaile izatetik (gainerako hizkuntza tibetoburmak legez) eransletasunera bidean (cf. Post 2006 eta baita Bhat 2000 hizkuntza tibetoburmen eta dravidikoen arteko erkaketa tipologiko adierazgarri baterako.

ez ‘femenino’-rik, *errain*-ekin gertatu bezalaxe: 1.ak ohiko *-ba* atzizkiaren aurretik **arre-* du, **eden* ‘amaitu’ (> *edegi/-ki* ‘kendu’)-ren APLIK-KAUS. ‘kanpora eraman(a)’ eta 2.a **e-ra-din-i* ‘etorri arazia’ dugu, izen pasiboarekin, ‘emakume ezkondua’, IErako Benvenistek (1969) erakutsi bezala.

*Ilhoba*-k (badira *loba* eta *lioba, lloba* ere) jatorri gaskoia bide du (cf. *hilou,-ole* ‘filleul,-le’ [eta, noski, lat. *filium*, gazt. *hijuelo*, etab.]), *alha, elhe, olha, onhil, orhoitu, unhatu…* eta beste askok legez, ondare zaharreko *ilhun, erhi* eta gainerakoen antzeko *h*-metatesiarekin; *eme* ere (à *emazte, emakume*) jatorri berekoa dugu (gask. (*h*)*emne*, cf. fr. *femme* < lat. *femina*); ik. Lakarra (2015a).[240] *Suhi/suin* < **suni* aspalditik (Bährengandik edo) bistakoa zen; ez hainbeste **suni* horretarik *-i* partizipioa isola genezakeenik eta are gutxiago **sun*-hori bat datorrela *su*-ren alomorfo zaharrenarekin, cf. *Sun-* Erdi Aroan. Azkenik, *-ba*-ren kognadoak bide dira 3.p.DAT *-o* (< *-bo*), eta *ba-* (baieztapen zein baldintzakoa): ‘GIVE-2’-ren gramatikalizazio bakoitzak tokarioan, dravidikoan edo ekialdeko zenbait hizkuntzatan lituzke paralelismoak, soilik hizkuntzaren barnean begiratuaz homofonia huts bezala hartzekoak badirudite ere.

Ia zenbaki guztiak iberieratik mailegatutzat azaldu ziren duela hamarkada bat (ik. § 2.1) baina ez da erraz horrelakorik sinestea (cf. Lakarra 2010a, 2013c):

1. hasteko, ez lexikoaren ez morfologiaren gauza handirik ezagutzen ez dugun (ik. De Hoz § 2.1en) iberierazko edozein azalpen baino hobeak izan ditzakete gehienek euskararen barnean: *bat, bete* < **bada, *bat-de* (aditz-izen zaharrarekin), *bi* (zenbaki hau postklitikoa zen Btik kanpo ere; hemen gorputz-ataletako aipatu **b*-ren jatorria?),[241] *hirur* < **her-(b)ur* ‘erhi labur’, *lau(r)* < **la-bur* ‘laburraren aldamenekoa’ (cf. *la-bar* ‘osin ingurua’), *bost* < **bor-tz* ‘biribildua’, *sei* < **sehi* < **sen-i* ‘ume bat gehiago’ (bosteko unitateaz gainera, Amazoniako hizkuntzetan legez; cf. Epps 2006), *zazpi* < *(bortz)-zaz-bi* ‘5 + 2’, *zortzi* < *zorrotzi* ‘mendi katea [bi eskuetako behatz buruek osatua; paralelo ugari IEz eta beste hainbat familiatan]’, *bederatzi* < **bat-e-ra-don-tz-i* ‘1 kendua’, *hamar* < **han-bor* ‘biribil handia [bi eskuena]’, *hamaika* < **hamar-badeka* ‘10 eta 1’, *hamabost* < **hamar-bortz* ‘borobil handia eta 5 ‘borobil txikia’, *hogei* < **bor-gen-i* ‘5 gehiturik [azken

240. § 3.5.4n ikusitakoaren ondotik, *-ba* ohiko ahaidetasun-atzizkiaz —eta testuan aipatu *ilhoba* : gask. *hilou* alor lexiko berekoa gehi dozenaka hVR- > VRh- metatesi-kasu gogoan—, halabehar hutsa ote *alhaba* eta *alha* : gask. *halà*-ren ‘haler, tirer à soi, trainer péniblement et lentement’ (behiak bazkatzera) arteko paralelismo formala?

241. Ik. aurreko atala, baita *bi buru*-ren familia zabaleko partaide dela ikusteko, **bun (> muño* ‘cabezo’), *bur*, **bun, gune* eta beste batzurekin batean. Badirudi baiezta litekeela *bi-/-bi* azpifamilia (cf. *azpi, ibi, zubi*, etab.) antzinako ‘gailur, goiko parte’ adiera gordetzen duelarik.

oinarenak]', *hemeretzi* < **hamar-bederatzi* (eta analogiaz *emezortzi* eta Azpeitiko eta «V-g»-ko *emezazpi*), *ehun* < **ehon* 'asko, oihal bateko hariak bezala';

2. gehienak (*bortz* da salbuespen bakar) bisilaboak eta are polisilaboak dira eta, beraz, aski modernoak, ez AEZkoak Orduñak uste bezala; bide batez, zenbaki sistemak hainbatetan berritzea guztiz ohikoa da eta Janhunenek (2008), adib., aitzin-uralikorako soilik «bi»[242] eta «bost» berreraikitzen ditu, enparatuak ondoko hizkuntzetan sortutzat emanaz;
3. euskarak ez du *mila* baino zenbaki apalago bakar bat latin-erromantzetik, nahiz honekikoa iberierarekiko ustezko kontaktua baino askozaz seguru, luze eta larriago izan.

**-Barren* dugu ordinaletako *-garren*-en jatorria, gorago aipatu *-b/d-* > *-ø-* > *-g-* bilakabidearen bitartez; gogora bedi ***batgarren* ezinezko dela (ez *hamaikagarren, hogeitabatgarren* edo *ehun eta batgarren*) jatorri honen semantika zaharrak azaldu legez; cf. ***aste bat barru, **hile bat barru, **urte bat barru / astebete barru, hilebete barru, urtebete barru. Herdi*-k, azkenik —eta *gaiherdi*-ko hasperena ez da epentetikoa eta ezta «morfologikoa» ere (ik. § 3.5)—, ez luke ezer iberierazko ERDER-ekin (ezta latinarekin ere inoiz proposatu izan dudanez!), baina bai *-di* atzizkiarekin (cf. *handi*, *hordi*, etab.) eta baita *her-* erro ezagunarekin ere (*hertsi, heste, heren, hirur, hiri*); ik. Lakarra (2013b).

### *4.6.11. Etimologian aitzinatuaz eta berreraiketa sendotuaz*

§ 4.2ko taulan ikusi dugunez, CVC-k edozein eredu bisilabikok baino portzentai arrunt handiagoak ditu etimologia ezezagunekoetan —alderantziz mailegu, aldaera moderno, eratorri-konposatu edo fonosinbolismoetan—, eta ia guztiek gainditzen dituzte jar dakizkiekeen iragazki fonotaktiko eta geografikoak, bisilaboek ez bezala; horrek guztiak bistako egiten du bere antzinatasuna enparatuen aurrean. Horrezaz gainera, monosilaboen eta bisilaboen arteko diferentzia larria areagotu egingo zela aurreikusten genuen aztergai izandako monosilabo autonomo modernoei berreraiketaren bitartez eskura ditzakegunak erantsiaz. Horren erakusgarri saio labur bat aurkezten dugu ondoren, aurreko taulan hondarren bat gordetzen zuen erro-eredu oro berraztertuaz.

Aurreko taulako datuak 2004 edo 2005ekoak ziren eta orain ikerketa etimologikoaren eta berreraiketa-jardunaren arabera berritzerakoan hainbat aldaketa egin behar izan ditugu eredu bisilabiko gehienetan: etimologia ezezaguneko eta «hondar» gutxiago, inoiz

---

242. Ageriki, euskaraz ere geruza bat baino gehiago bada zenbaki-izenetan eta, adib., *bi* '2' eta *bortz/bost* '5' *hamar* '10' ez ezik *hogei* '20' garrantzitsua eta horien guztien eratorriak baino zaharrago bide dira, eta baita '2'-tik '9'-ra doazen itxura aski gardenekoak baizen.

zifra absolutuetan ia 0ra eta portzentaietan ia % 0,0ra iritsiaz. Oraingoan maileguak ez markatu arren gehiago dira, eredu horien berankortasuna eta CVC-rekiko urruntasuna berretsiaz; adibidez, bat dela edo bestea dela, *atso, otso, alu, ogi, olha, elhe, ohar, ordu, orhe, ozta*… ezabatu behar izan ditugu bokalez hasi eta amaitutako ereduetan eta ez da harritzekoa orain ia eredu bisilaborik ez gelditzea % 1etik gora (cf. Lakarra prest.-2): erabat alderantziz CVC ereduan non *bar, baz, bel, bil, bon, bur, dan, das, daz, den, der, din, don, dor, dos, dur, dun, dus, duz, gar, han, her, khar, khin, khus, nal, nan, nin, non, sen, son, sun, thor, zal, zan, zen, zo(n)*… gutxienez gehitu beharra den.

Hara taula berritua: [243]

| EE | IZ | L | % | EZ | %-1 | %-2 | H | %-1 | %-2 |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| CVC | 325 | 152 | 46.76 | 112 | 73,68 | 34,86 | 90 | 59,21 | **27,69** |
| oCV | 85 | 29 | 34,11 | 03 | 10,37 | 03,52 | 03 | 10,37 | **03,52** |
| aCVC | 425 | 110 | 25,88 | 22 | 22,00 | 05,17 | 05 | 04,54 | **01,17** |
| hVCV | 425 | 44 | 09,65 | 07 | 15,90 | 01,64 | 05 | 11,36 | **01,17** |
| SVTV | 300 | 75 | 25,00 | 12 | 16,00 | 04,00 | 03 | 04,00 | **01,00** |
| aCCV | 215 | 82 | 38,13 | 04 | 04,87 | 01,86 | 02 | 02,43 | **00,93** |
| oCVC | 425 | 47 | 11,05 | 05 | 10,63 | 01,17 | 03 | 06,38 | **00,70** |
| TVRV | 600 | 195 | 32,50 | 23 | 13,07 | 04,33 | 02 | 01,02 | **00,33** |
| TVSV | 600 | 95 | 15,85 | 13 | 13,68 | 02,16 | 02 | 02,10 | **00,33** |
| uCVC | 425 | 54 | 12,70 | 05 | 09,25 | 01,17 | 01 | 01,85 | **00,23** |
| oCCV | 215 | 39 | 18,13 | 02 | 05,12 | 00,93 | 00 | 00,00 | **00,00** |
| aCV | 85 | 64 | 75,29 | 00 | 00,00 | 00,00 | 00 | 00,00 | **00,00** |
| uCV | 85 | 44 | 51,75 | 00 | 00,00 | 00,00 | 00 | 00,00 | **00,00** |
| SVRV | 200 | 71 | 35,50 | 04 | 05,21 | 02,00 | 00 | 00,00 | **00,00** |
| RVTV | 300 | 69 | 23,00 | 08 | 11,59 | 02,66 | 00 | 00,00 | **00,00** |
| mVCV | 425 | 94 | 22,10 | 12 | 12,76 | 02,82 | 00 | 00,00 | **00,00** |
| TVTV | 900 | 190 | 21,11 | 16 | 08,42 | 01,77 | 00 | 00,00 | **00,00** |
| uCCV | 215 | 45 | 20,93 | 06 | 13,33 | 02,78 | 00 | 00,00 | **00,00** |
| RVRV | 200 | 41 | 20,50 | 02 | 04,87 | 01,00 | 00 | 00,00 | **00,00** |
| CVmV | 325 | 49 | 15,07 | 09 | 18,35 | 02,76 | 00 | 00,00 | **00,00** |
| RVSV | 200 | 24 | 12,00 | 00 | 00,00 | 00,00 | 00 | 00,00 | **00,00** |

Bestalde, taulotako kalkuluak fonotaktika modernoarekin burutuak dira (6 T, /m/, /f/ eta /l/-rekin hitz hasieran, demagun). Hots, zuzenean AEZri edo AEMri baino gehiago, EBZri dagozkio emaitzok, hain larri izanagatik CVC-rentzat eta hain urri eredu bisilaboentzat. Kenketak eginaz eredu guztietan «izan litezkeenak» gutxitu

243. *Legenda*: EE = erro-eredua, IZ = izan zitezkeen formak, L = lekukotutako formak, EZ = Etimologia ezezagunekoak, IZ, H= EZ iragazki fonetikoa eta geografikoa ezarri ondoren.

eta horrenbestez, eredu bakoitzeko «gauzatutako —etimologiagabeko— iragazkiak gainditutakoen» azken portzentaiak beste horrenbeste igo (% 25-40 bitartean edo): dagoeneko % 1etik behera diren bisilaboentzat gertakari hau ez da batere esanguratsua etengabeko % absoluturako bidean; alabaina, lehen % 15ean edo zen CVC-rentzat bai, bisilaboetarik lehengoa halako bi urruntzen baitira.

Azkenik, kalkuluok AEZren fonotaktika murritzagoaren arabera eginaz (ik. 102. oh.) fosilen portzentaia % 40 baino gehixeago goratuko litzateke: eredu bisilabikoek taulako zifra apal horietan jarraituko luketen bitartean —are apalago bilakatzen ez badira, beren azterketa oraindik irekia baita— CVC % 39ra hurbilduko litzateke.

## 5. DIALEKTO HISTORIKOEN AURREHISTORIA: AITZINEUSKARATIK EUSKARA BATU ZAHARRAREN HAUSTURARANTZ

> I believe that if we want to make progress with ancient linguistic geography we have to do two things. The first is to work backwards in time from the known to the unknown, not trying to go too far too fast. The second is to use ancient linguistic data, and not use modern languages or genetics or archaeological 'cultures' as surrogates for it (Sims-Williams 2012: 14; cf. Shen 2011: 2 mandarinaz).

> Uno de los vicios mentales más arraigados entre quienes se enfrentan con nuestro pasado es el concepto de la inmutabilidad de las cosas, el pensar que ha sido siempre igual y que no han cambiado con el correr de los tiempos (Banús y Aguirre 1990: 347).

Azken atal honetan (cf. Lakarra 2014) euskararen historiaurrearen berreraiketarako ezinutzizko alderdi parea arakatu nahi dut: diakronistak azken 2.500 edo 3.000 urteetako bilakabidea berreraikitzeko ezinbesteko dituen aitzinhizkuntzen gutxieneko kopurua, bata, eta hizkuntzak edozein garaitan berezko duen aldaketari lotutako dialekto zatikatzearen oinarriei dagokiena, bestea. Euskararen dialektologia historikoaren inguruko lanetan mugarri dugu Mitxelenaren 1981eko «Lengua común y dialectos vascos»; geroztik dialekto modernoen abiapuntua ez KA.-ko AEM, baizik eta K.o.-.ko v-vi. mendeetan garatutako hizkuntza-batasuna genuke, batasun horrek Barbero eta Vigil-ek (1965) deskribatutako eszenario historikoan lukeelarik oinarri.

Gure lanak bi helburu nagusi ditu: batetik Euskara Batu Zaharraren oinarriak berrikusi eta linguistikoki definitu beharra erakustea, Mitxelenak ez baitzuen ezinbesteko eginkizun hori bete. Hots, Mitxelenak v-vi. mendeetan kokatu zuen eraikuntza horrek —guztiz interesgarri eta are azalpen botere handikoa izan arren— hizkuntzaren sistemaren

barnean azterlan larri eta ugarien premia du nola, noiz, non, zein gizarte-modutan… sortu zen, zenbat iraun zuen eta noiztsu hautsitzat eman genezakeen aztertzen hasi baino lehen. Gainetik, egiteko erraldoi hori enparatuko tradizio linguistiko garatuetan bezala burutu behar genukeela aldarrikatzea, hots, aurretiko aitzinhizkuntza estandarrari buruz (AEMri buruz) izandako berrikuntzak erabiliaz (cf. Petit 2007); horretarako aztertu dira, abiapuntu bezala, zenbait berrikuntza fonologiko eta morfologiko.

Bigarren helburua hizkuntza-batasun horren haustura ez behingoan baizik eta etengabeko zatikatzearen bidez, adarkatze bitarraren ondorio gisa azaldu behar dela aldarrikatu nahi dugu: kendu beharko ditugu gogotik orain arteko 6, 8 edo 12 adarreko dialekto-zuhaitzak eta baita ohiko banaketetako adabegi bakar eta behin-betikoa ere: ez dirudi euskara izan litekeenik horrelako bilakabidea pairatu duen hizkuntza edo familia bakarra; are ezinago, ondorioz B eta BN-mend, Z eta G… adin bereko dialekto bailiran jardutea, beste inon ez bezala, eta ustez horien historiaz dakigunaren aurka.

Hizkuntzak berezko duen aldakortasuna oinarritzat hartuaz, saio honen ondorio nagusietarik bat aipatzekotan, hurbilketa akroniko, ukroniko edo pankronikoak saihestu beharra aipa bide genezake. Horrekin batera hizkuntzalaritza diakronikoak nonahi darabiltzan irizpide eta jokamoldeei lotu beharra, azalpen sakonagoak erdiesteko bide bakarra baitugu; orobat, gogoan hartzea kronologia gure egiteko nagusia dela Benvenistek zioen bezala, ez interes urriko zertzelada baztergarria.

### 5.1. Dialektologia diakronikoa 1981 arte

Dakigunez, Luis Loucien Bonapartek zortzitan banatu zituen *azkenik* bere garaiko (~1860) euskal hizkerak; *azkenik*, zeren zazpitan (BN bakarrarekin) edo bederatzitan (bi B-rekin) egitea ere otu baitzitzaion uneren batez, idatziz adierazi legez (cf. Elordui 1995). Berrogei urte geroago, Azkuek bere Hiztegian «Espainiako Z» euskalki asketzat eman zuen (Err[onkariera]) eta ia beste 60ren ondoren —bere egiteko nagusi zen fonetika historikoazko helburuetarako—, Mitxelenak Aez[kera] eta Zar[aitzuera] ere berezi zituen, zein bere iparraldeko BNetarik. Gainetik, Bonapartek ezagutu ez zuen —eta noizbait ezagutu arren Urkixok eta Azkuek aztertu eta erabili ez zuten— Landucciren (1562) hiztegiaren bitartez, dialekto berri bat (= Hegoaldekoa, A[rabera]) erantsi zituen zerrendara (cf. haren ezinutzizko lan nagusiak: Mitxelena 1958, 1961/77, 1964a). Azkenik, Zuazok (1998) seitan bildu zituen xx. mende amaierako hizkerak. [244]

---

244. Bonaparterekin berarekin hasi ziren bestelako sailkapenak: printzeak zioenez, hirutan bana zitezkeen (Mendebala + Erdialdea + Ekialdea) eta, menturaz, bitan: Mendebala / Erdi-Ekialdea. Ohar bedi, hoberenean ere sailkapenok egoera modernoari zegozkiola, ezaugarri eta isoglosa modernoen gainean eraikiak direla eta ez dutela aukera handirik 500, 1.000 edo 1.200 urte

Laburbeharrez edo gehiagoren beharrik ez zelako —dozenerdi orrialdetako euskararen entziklopedia-aurkezpen orokor batean ahapaldi labur bat egokitu zion dialektologiari—, Lacombek (1924) edozeinen esperientziako kontu gisa zekarren hizkera modernoen sailkapen bikoitza (B eta gainerako guztiak); horrezaz landa, argudio lexikoak —Bk gainerakoek baino ondare zaharreko aparteko hitz gehiago omen— eta morfologikoak (*egin* laguntzailea) aipatzen zituen. Uhlenbeckek, are urrutiago joaz, bikoiztasun sinkroniko horri erabateko, jatorrizko, sakontasun diakronikoa eman zion (1947: 544).[245]

Mitxelenak (1964a) batari eta besteari erantzun zien.[246] Lacomberen arrazoiak ahulak ziren: giputz-nafar gisa, haren hiztun-esperientzian Zrekin eta Err-ren azken hatsekin topo egitean izandako zirrara ez zen Brekin egitean sortutakoa baino txikiagoa izan. Argudio lexikoak ere ez dira monta handiko: ez da frogatu (eta ez da frogakizun erraxa ere) Bk enparatuek baino ondare zaharreko lexiko propio gehiago duenik;[247] ik. Etchebarne (2003) eta (2006) lehen urrats bezala. Gainera, hainbat hitz bide dira egungo giputxek ulertu ez arren duela mende gutxi batzuk beren lurraldean usuko zirenak, ez soilik Iparraldean. Orobat, *egin* laguntzailea lehen testuetarik ageri da Gn eta An ere, eta ez soilik Bn; areago dena, hiruretan da oraindik XVI eta XVII. mendeetan (baita Bn ere) noizbait orokorra izan den **ezan*.[248]

Uhlenbecken azalpena are funtsgabeagoa da: B eta G hizkuntza ezberdinetatik jalgi hizkerak dira harentzat eta sortzezko ezberdintasun hori gorde omen dukete, azken

---

lehenagokoarekin bat etortzeko, ez dialekto kopuruan, ezta hauetariko bakoitzaren egitura eta hedaduran ere.

245. Lafonek eta Allièresek (cf. Lakarra 1986b) ez zuten kontua bistakotzat eta ondorio horien froga eske ziren; alabaina, Lacombek ez zion gai honi azalpen eta argudio gehiago erantsi: artikulu honetako pasarte labur horren fama gorabehera —Meillet eta Cohenen munduko hizkuntzen libururako euskararen aurkezpen orokor txiki bat zen—, egilea ez zen dialektologoa eta bere ikerketa-jardunean alor horretarik urruti ibili zen.

246. Aurreko urteetan ere badira ohar politak, esaterako Lekuonak Axularren edizioari jarritako hitzaurreari buruz («Guipuzcoano y vasco» deitzen du hori, bide batez). Uhlenbecki Tovarrek ere urte horretan (1959) erantzun zion, zehaztasun filologiko handiz izan ez arren.

247. Ik. Etchebarne (2003) eta (2006) dialekto-arteko erkaketa lexikoaren hasikin batzuetarako.

248. Oso berezia da **ezan* eta *egin*en konbinaketa B, G eta An, gramatiketan honetaz gauza handirik esan ez arren: **ezan* à Nork-Zer, *egin* à Nork-Zer + Nork-Nori-Zer datibo-komunztaduraren historiarekin lotutako azalpen baterako (ik. 5. kap. eta hemen § 5.4ko oharrak ez dialektoen hautapen gisa, gramatikalizazio-katearen berrikuntza-sailen ikuspegitik baizik). Bide batez, ezaugarri zahar honek G B eta Arekin du biltzen, eta gainerakoekin kontrajartzen, eta gertakari hau ezin ahantz liteke dialekto bakoitzaren eta EBZren arteko adabegiak berreraikitzeko orduan (ik. beherago § 5.8).

mendeetan jauzi hori ematuaz joan arren. Alabaina, B eta gainerakoek fonologia, morfologia, sintaxia eta lexikoaren ardatzetan bat egiten dute, eta batasun hori erabateko berdintasun bilakatzen da gorantz egin ahala; bestalde, lehen lekukotasunetarik hona beren diferentziak etengabe ugalduaz eta handituaz joan dira, ez ematuaz, hark zioenaren aurka.[249]

Begi-bistakoa da B eta Gren arteko etena, neurri handi batean, bataren eta bestearen ezberdintasunei haize emateak eta berdintasun eta antzekotasunak dialektoen «eredu kanonikotik» ezabatzeak dakartela; alabaina, ezberdintasun horiek usuenik oso berankorrak eta soilik herrixka gutxi batzuetan lekukotuak dira (ez lurralde osoan edo gehienean). Gainetik, xx. mendearen bigarren zatian, Landucciren hiztegiaren eta xxi. aren hasieran, Lazarragaren eskuizkribuarenaren argitalpenari eskerrak, ohartu gara xix. mendeko egoera islatu asmoz egindako Bonaparteren karten bitartez ezin ikus litekeenaz: hots, Bko eta Gko hizkerez kanpo —eta garai historiko luzean, ez soilik historiaurre urrunean—, bazela Araban euskara beregaina, fonetikan, morfologian zein lexikoan aski berezia; Mitxelena (1958)-ko analisiaz landa, gogoratzekoa da Oihenart eta Larramendiren lekukotasunak ere horretara garamatzala. [250]

Arabako euskara honek —eta horren buztanak ditugu hein handi batean gorago aipatu Oñati aldekoa eta «Gko B» ere— ezaugarri propioez landa, inguruko dialektoekin komunean zituen ezaugarrien bitartez, berebiziko zubi-lana egiten zuen B, G eta are GNrekin. Dialektoak talde estanko gisa hartzen dituen eta Arabako euskara kontuan ez duen analisiak —dagoeneko Mitxelena (1981a)-en akats hau markatua zen— are urrutiago ikusi ohi ditu B eta G, batez ere erkaketan ez benetako lekukotasunak baizik eta «hiper-B» eta «erdi-G», hurrenez hurren hanpatuak eta txikiratuak, erabiltzean usuenik; cf. Lakarra (1986b, 2004) eta Mounole (2011a), gehi hemen 5. kap.

---

249. Ik. Lakarra (1986b)-ko taula, zeinetan B zah., G zah., B eta G erkatzen diren; bistan da horko ezaugarri gehienak arkaismoak direla baina horrek ez du kentzen bere balioa B eta G urrunduaz joan direla erakusteko.

250. Dialekto beregaintzat hartu nahi ez dutenek beharko lukete azaldu zein den beren neurri zehatza dialekto eta hizkeraren artean bereizteko. Gainetik, beren arrazoi sinkronikoek ez lukete itxiko gure ikerketa A & Bren erlazio diakronikoaz, ezta MEZ eta horien artean adabegi gehiago onartu beharra dugun ala ez ere.

Bestalde, Lazarragaren lekukotasunak areagotu egin ditu —Erdi Aro akabuan eta Aro Modernoaren hasieran, bederen— Arabako euskara dialektotzat hartzeko arrazoiak; ik. Lakarra (2014), Mounole (2015b) eta liburu honetako 5. kap. Gogoan izan bedi (cf. beherago), dialekto guztiek *ez* dutela kronologia bera eta, gainera, sortu ez eze hil ere egiten direla honako edo harako isoglosa jakinen konbinaketak (= dialektoak). Arrazoibide sinkronikoek, bestalde, ez dukete itxiko gure ikerketa B eta Aren erlazio diakronikoaz eta ezta MEZ eta horien artean beste adabegirik den edo ez ere.

Leinuen jarraipen gisa nahiz AEren zatiketaren emaitza legez har, dialektoen historia eta dialektalizazio-prozesua bera XIX. edo XX. mendeetako euskalkietatik abiatu ohi da, nahiz ikerketaren helburu edo ondorio mota honi buruzko adierazpen garbiak exkaxak diren.[251] Hurbilketa oker honek lor lezakeen bakarra egungo egoera tautologikoki aldarrikatzea baino ez da, eta ezin ordezka litzake ez aldaketaren teoriaz dakiguna, ezta bost mendetako lekukotasun aberats edo bazter-ezinek dioskutena ere.[252] XIX. edo XX. mendeetako mapek —egoki hautatutako isoglosen gainean eraikiak balira ere— ezin dute une jakin bateko fotografia baino eman ahal. Ez dugu inongo segurantzarik uste izateko 100, 300, 500 edo urte gehiagoz fotografia hori baliagarri izan litekeenik eta bai, aldiz, alderantzizko froga argirik.[253]

### 5.2. Mitxelena Euskara Batu Zaharraz

Teorian ez bada praktikan, zabaldua da direlako euskalkiok oso zaharrak eta betidanikoak bailiran jardutea, euskarak bai baina haren zati diren dialektoek aldaketarik jasango ez balute bezala, ez osagaiei eta ez mugei —ezta, beraz, naturari ez kopuruari ere— dagokienez. Ordea, *hizkuntza, dialekto* eta *isoglosa* berbak hartzean, soilik lehena eta azkena izan litezke absolutuak edo oinarrizkoak, ez *dialekto*, hori —are euskal dialektoen kasuan ere— beti izango baita beste zerbaiten (hizkuntzaren) menpeko eta beste

251. «Leinuez» —historialari gutxik onartzen du egun hitz hori bere adiera zahar eta esanguratsuenean— eta euskalkiez Caro Barojak edo Irigaraik zituzten iritziak toki askotan aipatu eta bildu izan dira. Caminok (2008b: 243) dioen legez, lehengo eta oraingo dialekto sailkapenetan ez da soilik euskara aldatu: horiek adina irizpideak ere. Bidenabar, hizkuntzalaritza IEan ditxo zabaldua da (Watkins zen horren lekuko) azken bi mendeotan gehien aldatu eta are «eraberritu» den hizkuntza aitzin-IE dela.

252. Horietarik da K. Ulibarrik bere tesirako prestatu (UPV/EHU 2015) eta aurki argitaratuko den XVIII. mendearen azken hereneko Aiarako sermoitegi txit interesgarria.

253. Ik. Lakarra (1986a)-n Urkixoren hurbilketa *RS*ren jatorria aztertzean: B eta Gko ezaugarriak zituelakoan Arrasatekotzat jo zuen 400 edo 500 urte lehenagoko testua, Garibairen testu seguruekin erkatu ere gabe (!).

Lakarra (2014)-n markatu zenez, 1616-17ko Rosen gutunetan ez da *k-* bakar bat ere dozenaka erakusletan (*g-* bat eta ehunetik gora ø-), XIX eta XX. mendeko lekukotasun eta aurkezpenek ezaugarri hori betidanikotzat (are AEkotzat!, cf. *FHV*) jo badute ere; gehi liteke belar ahoskabe zein ahostuna falta dela Beriainengan (J. Manterolaren oharra) eta baita Zannettoren *Kredoa*-n, eta Elsoren dotrinatik gordetzat jo izan diren apurretan nahiz 1609ko poesietan ere (ik. *TAV* eta *ConTAV*). Elizaldek ere 6 *an dago*, 7 *valle ontan*, 7 *desterru onen*, 9 *Mandamentu ebec*, etab. ditu, belar bakar bat gabe; mende bat beranduago, aldiz, *g-* orokorra da Elkanoko Lizarragarengan. Beherago, § 5.8n gutun horietan Err modernoko aditzetako *gr-, zr-* eta *zt-* taldeak ere falta direla markatzen da.

zerbaiten (isoglosa bat edo batzuen) zordun, horren gainean eraikia baita, eta harako edo honako hizkuntzalariren irizpideen arabera eraikia, gainera. Hemendik ateratzen da beren definizioan erabiltzen ditugun ezaugarrien eta ezaugarri horiei eman pisu eta garrantziaren arabera, dialekto gehiago edo gutxiago eta muga hauekin edo besteekin aurkituko ditugula, eta are isoglosa berberak erabiliaz ere dialekto kopurua eta dialektoen mugak alda litezkeela eta aldatu ere egin ohi direla, sinkronian nahiz diakronian.

Diakronisten artean, aspalditik zabaldua da euskalkien arteko diferentziak (Bonapartek bere mapetan islatuak, kasurako) txikiak direla eta, beraz, haien jatorriak ezin duela oso zaharra izan,[254] beren baitan gordetzen duten informazioak ezin baikaitu urrutiegi eraman (cf. Vogt 1955). Adib., *i-* / *u-* edo *-er-* / *-ar-* dira bokalismoan diferentzia dialektal zaharrenetarikoak (cf. Mitxelena 1981a), baina Erdi Arora arte ez dugu horrelakorik aurkitzen —egia da aurretiaz Akitaniako idazkun errumesak (K.o.-ko I-III. mendeak) baino ez ditugula— eta, gero ere, hedadura txiki eta esangura eskasekoak ditugu, sistema zahar oso ezberdina berreraikitzeko aukerarik gabekoak: txandaketok ez dute 5 bokal ezagunetako euskalkiek gorde ez duten ezeren lekukotasun erantsirik; *e* > *a* bilakatzea dardarkari baten aurrean hain da arrunta hainbat hizkuntza eta garai ezberdinetan (baita euskaraz ere), non ezin balio lezakeen zatiketa dialektalari sakontasun diakroniko apartekorik aitortzeko (cf. B *igerri, ulertu, aztertu,* BN-Zar-Err-Z *ikertu/ikartu* < **-berri*). Antzeko zerbait gertatzen da XVIII. mendera arte lekukotzen ez den *gintzazan*ekin (vs *ginean, zinean, zirean*), *dauz*ekin (vs *dituz, zituzan*) eta besterekin.[255]

Mitxelenak erakutsi zuen legez (198a1: 301-4), ezaugarri nagusienetan historikoki bata bestearengandik etengabe urruntzen kausitu arren, dialektoak beren artean hurbil dira eta, beraz, hurbil behar luke izan haien iturburuak: «deklinabidea» berbera da nonahi; *-rean*-en kideak Mendebaletik kanpo ere badira eta *-gaz* (< orok. *-ga* [lokatibo biziduna] + orok. *-z*) soziatiboaren aldean *-kin* ere agertzen da; Bk ez du bereizten abs./gainerakoak 3. gradukoan (*hura* : *har-*); aldiz, lehen mendeetan hiru erakusleak artikulu gisa darabiltza, gainerako euskalkietan bezalaxe; *neurk, zeurk*… Btik kanpo ere lekukotzen dira —Lazarragaren, Axularren, Peñafloridaren edo Gerrikoren testuetan,

254. Cf. «El hecho de que los dialectos del quechua denuncien una fisionomía común transparente es el testimonio más patente de que la desmembración de la lengua madre que los "prohijó" ocurrió en tiempos relativamente no muy lejanos» (Cerrón-Palomino 1987: 81).

255. Mitxelenak berak dioskunez, «[d]e acuerdo con las convenciones universalmente aceptadas en lingüística histórica y en la comparación en concreto, no se pueden tomar en consideración para establecer relaciones interdialectales antiguas hechos cuyo carácter moderno queda de manifiesto al consultar los textos»; hor bertan, gogoratzen denez, iraganeko *z-* gorde egin dute —ez erantsi— B zaharreko *zeustan, zidin* eta antzekoek gehi Eibar-Bermeo bitartean oraintsuago gordeek eta gainerako euskalkietako kideek, jakina.

esaterako— eta *-r-* gora behera (cf. B *nok, ak*, etab.), forma hauek berdintsu eratuak dira nonahi. Bidenabar, *neroni, neronek* eta gainerakoek **neur* eskatzen dute eta *nihaur, zuhaurk* eta enparatuek forma berreginak edo analogikoak dirudite.

Aditzean berdintasunak ezin konta-ahala dira eta hainbat gehiago zenbat eta lekukotasunak zaharrago izan; horien artean denbora eta moduen sistema, forma trinko eta perifrastikoen distribuzioa, laguntzaileak, alokutiboak, *-te/-ke* atzizkiak eta *di-* laguntzailea aipatzen ditu Mitxelenak. Jokabide nagusi zaharrak berberak dira, batez ere Euskal Herri osoko toponimian ageri diren *-aga, -eta, -zu* atzizkiak bereziki aipatzen dituelarik; *-aga* toponimoen ugaritasunak ere data berantiarra dakarrela deritzo.

Halaber, AEtik ez datozen zenbait berrikuntza —ozenen bilakabideak bokalartean, herskariena hasieran eta -V nahiz -C lehen osagaiaren akabuan fonologian, gehi artikuluaren sorrera eta plural berria morfologian…— dialekto guztietan dira (Mitxelena 1981: 304-7). Honenbestez, AEk —are AErik modernoenak, erromatarrak Euskal Herrira iritsi aurrekoxeak— ez digu euskalki historikoen jatorritzat balio; Campbellek (2011) gogoratu bezala, euskara modernoa AEtik zuzenean hel baledi —hizkuntzek berezko duten aldakortasun hutsean murgildurik, alegia—, egun ez bide zen hizkuntza bakarra izango, hizkeren arteko ulergarritasuna askozaz zailagoa eta ezberdintasunak ere arrunt larriagoak baitziratekeen.

Gogoeta hauek eraman zuten Mitxelena «Euskara Batu Zaharra» (EBZ) deitzen dugun zera proposatzera, hizkuntzaren garai berezi eta ezinutzizkotzat, K.o.-ko V-VI. mendeetan: labur, bai AE eta bai EBZ hizkuntzaren bi garai ezberdini dagozkio eta, biak ere soilik berreraiketaren bitartez eskura litezkeen arren, beren artean alde kronologiko eta metodologiko handia da: AE berreraiki litekeen garairik zaharrena eskuratzeko berariazko saioa dugu, irispidean diren lekukotasun eta lanabesek baimentzen diguten urrunena; EBZ, aldiz, dialektalizazio historikoaren aurrekoxe aldia, dialekto historikoak azaltzeko aukeratzen dugun lehen isoglosa sortu zenekoa (edozein dela ere hau), ez 5 edo 10 mende lehenagokoa.

Ikerketa-eredu honetan euskalki modernoak —zein ere diren— ez datoz zuzenean AEren zatiketatik baizik, eta (*gehienez ere*) EBZtik, ia 1.000 bat urte geroago. Mitxelenaren ustez, tarte horretan emango bide zen batasun-prozesu bat, lehenagoko bereizkuntzak ematuaz eta berrikuntza komun garrantzitsuak jasoaz. Hizkuntzek berezko dute, etengabeko, barne-berizkuntza eta zatikatzea, ez bateratzea —pidginak eta kreolen lehen garaiak dira salbuespen ezagun bakarra— eta antzeko gertakariak diren hizkuntza eta garai guztietan bezala, sistemaz kanpoko indarren eragin zuzenen bidez baino ezin azal liteke EBZ.

EBZren ondorio diakroniko nagusietarik genuke dialekto eta leinuen bateraketaren zein horien arteko edozein erlazio zuzenen ahulezia nabarmentzea: badira zenbait muga

bat datozenak edo hurbil Era hasierako leinuenak eta 1866ko mapetakoak erkatuaz, Irun-Hondarribiko bardulo eta baskoiena gehi Deba ibaian bardulo eta karistioek omen zutena, eta Bonapartek G eta GN gehi B eta G modernoen artean ezarriak, batez ere. Haatik, horietatik urrun joan gabe badira arazo latzak ere: historikoki ez da onartzerik Oñati aldeak Bizkaiko euskalkia hartzea, mendeetan zehar Arabari lotua izan delarik, Gipuzkoan XIX. mendearen erdialdean kokatu baino lehen. Bestalde, Nafarroa Garaian Bz landako euskalki guztiak mintzatuko lirateke, ez soilik Hegoaldeko eta Iparraldeko GNak: zeintzuk lirateke dialekto horiek sortu zituzten Nafarroako 7/8 tribu (edo apezpikutegi) horiek? Orobat, ba ote zentzurik bi BNei leinu zahar bana jatorritzat bilatzeak Iglesiasek (2011) egin bezala, Bonaparte berarentzat dialekto bakarra izateko punttuan zirelarik eta bakartzat tratatu dituztenean hizkuntzalari askok?[256] Honelako azalpenak soilik euskalkien eta horien ezaugarri eta mugen betierekotasuna bermatutzat joaz burura litezke. Bidenabar, Barandiaranek neolitikoan edo paleolitikoan ere «susmatzen» zituen euskalkiak (= dialekto modernoak); zalantzarik gabe, orduko edozein hizkuntzak ere bazuen dialektorik baina besterik da haiek ezagutzeko modurik izatea eta, batez ere (!?), dialekto historikoak (zeinahi ere diren) haien jarraipen.

Ikerlerro honetan euskal dialekto historikoak (edozein direla ere) ez datoz zuzenean AEren hausturatik, baizik eta —haietarik zenbait eta gehienez ere— ia 1.000 urte ondoko EBZtik. Epe horretan Mitxelenak dioenez lehengo diferentziak beratu eta hainbat berrikuntza amankomun jasotzea ekarri zuen konbergentzia-prozesua izan omen zen. Hizkuntza guztiek banaketa eta barne-zatiketaranzko joera amaigabea dutelarik, ez bateraketaren aldekorik —pidginak eta hizkuntza kreolen lehen garaiak dira salbuespen ezagun bakarrak—, antzeko bilakabideak izan dituzten gainerako hizkuntza eta garaietan bezala, horrela ulerturiko EBZren sorrera soilik sistema linguistikoaz landako indarren eragin zuzenaz uler liteke.

Paleolitikoa eta are neo-eneolitikoa ere zaharregitzat joaz, Mitxelenak Erromatar Inperioaren erorikoaren ondotiko baldintzak ikusi zituen egokien hizkuntza-bateratze horren oinarri estralinguistiko beharrezkoak eriderteko. Funtsean, Penintsulan barbaroen inbasioen ondotik sortu anabasak kantabro eta baskoien independentzia ekarriko zuela aldarrikatzen zuen Barbero eta Vigil-en (1965) eredu historikoan oinarriturik, Mitxelenak proposatu zuen V. eta VI. mendeetan kanpoko aginteekiko loturak are laxoagoak bilakatu zirela eta barneko indar eta antolamendua sendoago, ondorioz, hizkuntzarekiko.

256. Are gehiago, Zuazok (1998) eta jarraitzaileek BN biak Lrekin biltzen dituzte dialekto bakar batean (ik. § 5.8 iruzkin labur baterako).

### 5.3. Banaketa bitarrak eta besteak

II. Mundu Gerraz geroztiko hizkuntza IEen sailkapen garrantzitsuenak hartzen baditugu —eta baita lehenagoko asko ere—, ez da hor aurkitzen Bonaparteren nahiz Zuazoren 8 edo 6 adarreko (nahiz Mitxelenaren 12ko) eta adabegi bakarreko zuhaitzik.

1. irudia. IEren zuhaitza (Ringe 2006: 5)




Antzera genuke austronesioarena, ehunka hizkuntzaren zuhaitzarekin:

2. irudia. Austronesieraren zuhaitz genealogikoa (Lynch, Ross & Cowley 2002: 4)



edo kartvelikoarenarekin ere: [257]

3. IRUDIA. KARTVELIKOAREN ZUHAITZA (Mitxelena 1964a: 64)




Hots, zenbat dialekto hainbat eten dira enborrarekiko, eta etenok inoiz ere ez dira altuera berean jazoak: beste hitzez esateko, IE hizkuntzalaritzan (eta austronesioan, semitikoan, bantuan, uralikoan, kartvelikoan…) adarreztatze bikoitza aurkitzen dugu, ez *n*-koitza, 8-, 6- edo 12-koitza. Hemendik jarraitzen da dialektoek zeinek bere data dutela —dagokion berrikuntza bereizlearena— eta ez dela data bereko bikoterik eta are gutxiago hirukote, seikote edo enparatukorik, edozein ere direlarik hizkuntza(-familia) eta dialektoak.

IEn, austronesieran nahiz kartvelieran adarreztatzea iteratiboa da (ez behin betikoa) eta bitarra, aipatu euskararen bakar eta 8-, 12- edo 6-koitzaren aurrean. Hots, idealki bederen, ezaugarri garrantzitsu batek —edo, gutxiagotan, ezaugarri multzo batek— bi taldetan berezi ohi ditu hizkera guztiak: A hizkuntza edo hizkera, delako *a* aldaketa hori jasan dutenak eta *a* ez duten B hizkuntza edo hizkeren multzoa. Ezaugarri hori(ek) berrikuntza(k) d(ir)elarik, esan ohi da hori(ek) d(ir)ela bide A hizkuntza / hizkera berezi egin dela B aitzinhizkuntza edo familiatik.

Euskararen kasuan —eta honek duen larritasuna begi-bistakoa da hizkuntz historialariarentzat—, IE, austronesio, kartveliko nahiz gainerakoetan ikusi ohi dugunaren aurka, euskalkiek adin bera lukete, guztien gailurrean jarritako adabegiaren amaierakoa, hain zuzen: [258]

---

257. Bidenabar, kartvelikoarena Mitxelenaren lan ezagun batean izan dute ikusgai euskalariek (1964a: azken atala).

258. Euskal dialektoak biltzen dituzten zuhaitzak neuk formalizatuak dira aurreko egileen proposamenaren arabera. Esan gabe doa sinkronia hutsean ari zirenekin neure aldetik «gain-

4. IRUDIA




**Egilea:** Mitxelena (1961, 1964a)

Nabarmena da honelako hurbilketa baten desegokitasuna, isoglosek, hedadura ez eze data ezberdinak ere baitituzte, eta ezin, beraz, data eta hedadura bakarra izan Bren, Gren, GNren… definizioetan erabiltzen diren guztiek. Hizkuntzaren sistematik atera eta hizkuntzaren geografia moldatzen duten eszenario historiko, ekonomiko edo kulturaletara bagoaz ere, zaila da onartzen EBZtik momentu berean 8-12-6… dialekto sortzea, gainerako familietan —askoz ere lurralde zabalagoetan, bidenabar— une jakin bakoitzean bi baino egiten ez direnean. Hori bai, euskararena baino historia ezagunagoko familia horietan etengabe jarraitzen du zatiketak, euskalariok behinolako bakar harekin aseturik edo gelditzen garela dirudielarik.

Soilik adabegi beretik atera eta adabegikide diren biek lukete data bera, bata eta bestea sortzen eta bereizten dituen aldaketarena, alegia. Euskalaritzan, ordea, erabili ohi diren dialekto-sailkapen horietarik kanpo utzi ohi da diakronia eta, horrenbestez, gainerako familietan adarreztatze bikoitzaren bitartez dialektologiak eta diakroniak beren lanaren egiteko nagusitzat hartu dituzten ezaugarrien garapenaren azterketa, aldaketen hurrenkera eta banaketa dialektalak. Zorigaitzez, ez dirudi jokamolde hau denik, bai datazio absolutuetan, bai erlatiboetan eta baita hizkuntza aldaketa eta gizarte aldaketaren arteko erlazioaren ikerketan ere aurrerapenak ekarri ohi dituena.

### 5.4. Hautapenak ala berrikuntza-kateak?

***5.4.1.*** Rodríguez Adrados helenista espainiarrarengandik harturik sartu zuen Mitxelenak (1964) «hautapenen» azterketa eta geroztik euskal dialektoez idatzi dugun ia guztiok erabili dugu kontzeptu hori, nahiz betiere berrikuntzen atzetik beren azalpen-botereari dagokionez. Komeni da, ordea, ohar gaitezen «hautapenak» ez direla aipatu ohi beste tradizio landuago batzuetan (cf. Petit 2007, adib.) edota hizkuntzalaritza historikoko

---

interpretazioren» bat egon litekeela, nahiz saiatu naizen ahalik eta txikiena izan dadin.

eskuliburu ohikoenetan. Izan ere, horrelako zerbaitek balio sinkronikoa izan lezake, izatekotan, eta diakronikoki azalpen egokiagoak oztopatzea baino ez du lortzen. Hara bibliografian ageri diren horrelako bi kasu famatuenetarikoen inguruko zenbait ohar iruzkin gisa.

Dakigunez, iragankor *irrealis*-etako *egin* laguntzailea erabili izan da bibliografian B gainerako dialektoetarik —zehatzago **ezan* hautatu omen duen Gtik— bereizteko. Ahalegin horrek arazo saihestezinak ditu, bi aldetarik bederen: 1) *egin*-ez landa **ezan* ere lekukotzen da B arkaiko eta zaharrean, *fase sparita* gisa bada ere, eta 2) *egin* ez da soilik Bn lekukotzen: lehen testuetarik —eta galtzeko itxurarik gabe— ageri da Gn, noski. Horiezaz landa, Bonapartek (nahiz Lacombek eta Uhlenbeckek) kontuan izan ez zuten Araban ere ageri zaigu, Bko distribuzio morfosintaktikoaren oso antzekoarekin (cf. Lakarra 1985b, 1986b eta Mounole 2007, Mitxelena 1964a garatuaz).

**Ezan* noizbait orokorra izan da, baina, aldiz, ez dirudi *egin* Mendebaleko Euskara Zaharretik (MEZ) landa laguntzaile gisa gramatikalizatu ere denik. Beraz, kronologiaren aldetik *egin/*ezan* ez da «hautapen ezberdin» bat izan B-n eta G-n, hurrenez hurren, egungo eta lehenagoko datuek besterik baitioskute; hautapen hori duela mende asko B, A eta Gren arbasoak (= aitzin-MEZk) egin berrikuntza baitzen, **ezan*-ez gainera *egin* hartzean.

*5.4.2. Egin/*ezan/*iron* hautapen gisa aurkeztu ohi da Mitxelena (1964a)-z geroz baina horien distribuzio orokorra kontuan izanik, hautapen hori berankorra da edo, zehatzago, ez da hor hautapenik, bata bestearen ondoko hainbat berrikuntza baizik (cf. Lakarra 2014):

1. **elon* [> **iro*] aditzaren gramatikalizazioa laguntzaile bezala (orok.);
2. *-ra-* aurrizkiaren [< **elo(n)*] gramatikalizazioa (orok.);
3. **ezan* aditzaren gramatikalizazioa laguntzaile bezala (orok.);
4. **ero(n)* laguntzailearen galera (Mendebaleko [B-A-G] eta Lko berrikuntza);
5. *egin* aditzaren gramatikalizazioa laguntzaile bezala (Mend.ko berrikuntza);
6. **ezan* laguntzailearen galera (B osoko eta A-Gko zati batzuetako berrikuntza) [259]

Antzeko ondorioak atera ditzakegu datibo eta indikatiboko aditz laguntzaileak erkatzean:

259. Ijurrak (2017) erakutsi legez, kontuak benetan are korapilatsuago dira eta are gutxiago laguntzen dute hautapen bidezko azalpena: isoglosa interesgarriak ez dira *egin, *ezan* eta *iron* (hauei, gainera, soilik hiru aktantetakoekin erabiltzen den nafarrerazko **erazan* gehitu beharra dago), horien balio eta funtzio ezberdinak baizik, isoglosa berri hauek dialekto hedadura eta kronologia ezberdin eta aldakorrak dituztelarik.

| | BZ | BM | A | GZ | GL | LZ | LM | ZZ | ZM |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| *eradun | – | – | + | + | – | + | + | + | + |
| -i- | (+) | – | + | + | + | + | + | + | + |
| eutsi | + | + | + | – | – | – | – | – | – |

Kasu honetan sinpleegia da, inoiz egin izan den bezala (cf. Mitxelenaren iruzkina Lekuonaren *Gero*-ren edizioaz), «*eutsi* = B, *-i-* = G eta *eradun* = Ekialdea» aurkeztea, hautu-katea bailitzan. Ez da inola ere parekotasunik izan lehenaren eta enparatuen artean: *eradun/-tsi* eta *-i-* historikoki ia orokorrak izan ditugu —B da soilik hortik kanpora gelditzen dena— eta *eutsi* laguntzailea (ANag gisa orokorra izan da, jakina) ez da Btik eta Atik atera. Erregelen ordena bilatzen badugu, honelako zerbait genuke Nafarroarako eta Iparralderako berrikuntza ez-esklusiboen zerrenda:

1. *eradun*en gramatikalizazioa;
2. *-i*-ren gramatikalizazioa.

Gainerako dialektoentzat berrikuntza gehiago metatu behar ditugu:

3. *eutsi*-ren gramatikalizazioa B-n eta A-n;
4. *eradun*-en galera singularrean G-n eta B-n;
5. *eradun*-en galera pluralean B-n;
6. *(n)i(n)*-en galera pluralean nahiz singularrean B-n.

*5.4.3.* Aurreko paragrafoetan ikusten denez, zail da hautapenez hitz egitea: Bren kasuan, ikuspegi sinpleegi eta «aktualista» batek adieraziko lukeenaren aurka, berrikuntza berrikuntzaren gainean bildu du (zazpi), horietarik bi komunak EH osoarekin (1, 2), beste bat komuna Arekin (3), oraindik beste horrelako bat Grekin (4) eta azken biak esklusiboak (5, 6).

Zk, Lk eta BN/GNk aski dute lehen bi berrikuntzekin: hots, ez dute horrelakorik EBZ-z geroztik (agian ezta AEMtik ere), Gk (4) eransten die horiei —ez dirudi zaharregi, oraindik ere pluralean **eradun* baita GZn—; Ak, azkenik, (3) gehitu du (Brekin), baina ez du (4) —Gk eta Bk komunean dutena—, ezta (5) eta (6), Bren berrikuntza exklusiboak ere. Ak ez bata eta ez bestea eta polimorfismoarekin jarraitu zuen bietan. Gk ez zuen *eutsi* berrikuntza hartu —edo historiaurrean galdu zuen— eta singularrean **(n)i(n)* **eradun*i erabat gailendu arren, pluralean oraindik haren aztarnaren bat gelditu da zenbait hizkera modernotan.

Badirudi, beraz, «hautapenak» soilik deizio sinkroniko edo estatiko bat dela, ezinbestean hainbat berrikuntza ezkutatzen dituenak bere baitan; usuenik, gainera, deizio

horiek banaketa dialektalaren lehen urratsetan kokatzen diren fenomenoei ezartzen zaizkie eta horiek direlarik banaketaren bilakabiderako garrantzitsuenak, komeni bide da izanik ez duen izen hori ekidin dezagun, filologiaren edo/eta berreraiketaren bidez bilatzen ditugun kronologia erlatibo nahiz absolutuak erdietsiaz. «Hautu» eta «hautapenaren» kontzeptuak zeharo ukronikoak edo funtsik gabeak dira diakronikoki: bi isoglosa ez badira inoiz zeharo garaikide, —norbaitek banaketa dialektal bakar horren hasieran kokatzeko ausardiarik ba ote luke— ze zentzu du alomorfia kasu apalenetarik landa, bederen, «x-ek A» eta «y-k B hautatu dute» esateak, batez ere «hautu» horien artean mende osoak direnean eta hizkuntzaren alor ezberdinetako hainbat gertakari —«hautatutako» ezaugarriez eta, bereziki, «hautatu ez direnez»— estaltzea baino lortzen ez denean? Bestalde, «hautuak» baino lehen hizkuntzak ez ote zituen kategoria horiek?

Hau da, Bk *egin*, Gk *ezan* eta Zk *iro* «hautatu» baino lehen ez ote zen aditz laguntzaile iragankor irrealisik euskaraz? Eta ez ote du interesik zein zen jakiteak edo hortik egoera dialektal modernora nola iritsi garen? Edo, jarraitzeagatik, zergatik Gk ez du oraindik *egin* eta **ezan*-en artean hautatu (xviii. mende akaburantz oraindik Ak ere hautaketa burutua ez zuen bezalaxe) edo Z-k **ezan* eta **iron*-en artean edo zenbait hizkera nafarrek **ezan* eta **erazan* aski desitxuratu baten artean (ik. Reguero 2017)?

### 5.5. Euskara Batu Zaharraren beharraz

> *Puesto que el postular un vasco común relativamente próximo en el tiempo parece punto menos que necesario en el orden de la realidad y no meramente como una exigencia teórica de los métodos de la reconstrucción comparativa*, tenemos que pensar en las causas que llevaron a ella: no se olvide que una lengua común supone el sacrificio por extinción de los dialectos a favor de alguno de ellos. Como, por otra parte, la unificación lingüística suele ser resultado (y factor) de cohesión social, cabe muy bien pensar que un proceso de concentración sociopolítico precedió y acompañó a la nivelación dialectal (1981a: 310; [etzana neurea: JAL]).

Mitxelenak (1981a) bi aldarrikapen egin zituen EBZren inguruan: (1) euskalkiak ez datozela AEtik (K.a.-ko azken mendeetarik), baizik eta K.o.-ko v-vi. mendeko aitzinhizkuntza baten zatiketatik eta (2) bigarren aitzinhizkuntza hau aurreragoko euskal hizkera ezberdin eta sakabanatuagoen bateraketa-prozesuaren ondorioz sortu zela eta, hortaz, sistemaz kanpoko indar bateratzaile horiek gizarte-egoera apropos baten ondorio direla.

Funtsean hizkuntzalari guztiek onartu dute Mitxelenaren hurbilketa hau, baina orain arteko ikerketak ez du (2)-ren alderdi linguistikoaren aldeko frogarik erakutsi eta Mitxelenak ere ez zituen eman, beharrezko ere iruditzen ez bide zitzaizkiolako: hots,

euskalki historikoek komunean dituzten funtsezko eta hizkuntzaren alderdi orotako (deklinabide, erakusle, izenordain, aditz, hitz-eraketaren morfonologia, ozenen bilakaera eta beste hainbat ezaugarri, cf. supra § 5.2) eta, horrenbestez, Vogtekin, euskalkiak jatorri berekoak zirela eta horien iturburua lehen lekukotasunetarik hurbil datekeela ondorioztatu, bestela beren arteko hurbiltasuna ezinezko baitzatekeen.

Alabaina, hori hiztunarentzat edo zalearentzat aski bada ere, berreraikitzailearentzat ez da inolaz ere aitzinhizkuntza berri baten, EBZren, beharraren froga nahikoa. Egia da dialektoen arteko berdintasun asko ez hasierakoak baizik eta geroztikoak direla Mitxelenarentzat, hortik AEtik eta EBZtik eta ondoko berrikuntza paraleloetarik datorrena bereizi beharra markatua utziaz. Haatik, galbaheketa-lan hori ia urratu gabe dago eta hori burutu gabe eta EBZren ezaugarri nagusien irudi zehatzagoa eta bere kronologia gutxienekoa izan gabe, Mitxelenaren gainerako ondorioak —EBZ sortzeko beharrezko zen Euskal Herriko gizarte-egoera eta egiturari buruzkoak— gehienez ere gerorako utzi beharrekoak dira, hizkuntzalariarentzat ez baitute oinarririk.

Aipatu bateraketa linguistikoaren alderdi estralinguistikoaz historialariek beharko dute hitz egin eta orain arte ez dira Barbero eta Vigilek plazaratutako eszenarioaren alde agertu (cf. Larrea eta Pozo 2015, historigrafiaren aurkezpen on baterako); Mitxelenak hizkuntzaren bateraketaren oinarritzat hartu zuen haien ereduari ahuldade eta desegokitasun ugari aurkitu izan zaizkio eta ez da aspaldion ikerketa historikoaren «uhin nagusian».

Nolanahi ere, Mitxelenaren hurbilketaren lehen zatiari lotzea komeni da. Hots, orain bereon AEM eta euskalkien arteko hizkuntza-egoera bat onartzen dugu, bai, baina ez da horren beharra egokiro frogatua edo, ez bederen euskara egoera horretara Mitxelenak suposatu hizkuntzaz landako faktoreen bitartez iritsi zenik. Esan bezala, uste zabaldua da azken 2.000 urteetan euskal hizkerak berezi eta berezi izan balira ez 8, 12 edo 6 dialekto eta nolabaiteko ulerpen-zailtasunak alfabetatu gabeko hiztunen artean, baizik eta hainbat hizkuntza ezberdin bide liratekeela eta baita ezinulertua euskal hizkera ororen artean ere (cf. Campbell 2011). Kontua da honako hau ustea dela (eta oso uste arrazoizkoa, gainera) baina usteketatik jakitera pasatzea onuragarri bide litzaiguke. Glotokronologiarekiko eztabaidetan aski garbi gelditu zen bezala (cf. § 2.5.1), aldaketen erritmoa ez da bakarra ez hizkuntzen, ez hizkuntza jakin baten bi garairen artean, ez hizkuntza beraren garai bakarreko alderdi diferenteen (fonologia eta morfologiaren, lexikoaren bi eremuren…) artean ere; ez da, beraz, segurtasunik esan ahal izateko mende batean zein 10 milurtekotan zenbat aldatu *behar* den hizkuntza bat eta, adibidez, euskara aski edo gutxiegi aldatu den AEZtik edo AEMtik zein 1643tik hona, edota *x* dialekto izatea eta ez *y* hizkuntza justifikatua den. [260]

260. Susma genezake aldaketa kantitatea ez dela nahi eta nahiez berbera izango hizkera bakoitza irla

Euskararen bilakabidea aztertzeko —AEMrekin ez dela aski frogatzeko eta EBZ beharrezkotzat agertzeko—, komeni da beste tradizio batzuetan «tarteko aitzinhizkuntzak» bermatu (edo deuseztatu) asmoz garatutako irizpideei eta azterbideei so egitea. Hauetan tarteko aitzinhizkuntzaren beharra onartzeko ondoko dialekto edo hizkuntzaren berrikuntza komun zaharrak dira giltzarri —2.en aitzinhizkuntzaren zatiketa aurrekoak zehazki, eta ez geroztiko berrikuntza paraleloak—: aitzin-italiko-zeltikoarentzat ez da horrelakorik aurkitu gehienen ustez, aitzinhizkuntza horrek, funtsean, ez baititu mendebaleko IEk ez dituen eta bi azpimultzoentzat balioko luketen ezaugarriak eraikuntza hori ez bagenu baino hobeki azaltzen; aitzin-balto-eslabierak, aldiz, bai aitzin-IEtik, bai gainerako azpifamilietarik bereizteko berrikuntza bereizleak ditu eta bertatik —ez IEtik zuzenean— erator litezke hizkuntza baltikoak eta eslabikoak. Hots, aitzin-balto-eslabierak bere burua (haren beharra) zuritu du, baina ez aitzin-italiko-zeltikoak (cf. Petit 2007).

### 5.6. Aitzineuskara Modernotik Euskara Batu Zaharrera

Mitxelenaren 1981eko lanean euskalkiek ezaugarri asko batera izan arren, garbi utzi zuen ezaugarri komun hauek oro ez datozela dialektoen jatorritik bertatik; alabaina, ez zen frogatu eta oinarri sendo eta egokietan finkatu AEM eta EBZren arteko naturazko ezberdintasuna eta 2.aren beharra euskararen historiaurrearen azterketarako. Horregatik nahi izan dut erakutsi dialektoek hainbat berrikuntza fonologiko eta morfologiko komun garrantzitsu dituztela AEM ondokoak eta, oro har, euskalkietarik abiaturiko azterketatik ez garela AEMra iritsi ahal, gehienez ere, gugandik askozaz hurbilago bide zen EBZra baizik. Beraz, EBZren beharra AEMz geroz izan eta euskalki guztietan diren edo izan diren berrikuntza zaharrenen bitartez finka genezake, beste edozein hizkuntzaren bilakabidearen azterketan proposatu zeinahi hizkuntza edo hizkuntza-familiaren aitzinhizkuntzarekin egin legetxez.

AEM eta EBZ bitartean edo hau hautsi baino lehen pairatu ondoko aldaketak bederen kontuan hartzekoak iruditzen zaizkigu:

---

batean garatzen delarik, polinesieraz edo, oro har, austronesieraz bezala, irla propiorik izan gabe ere lurralde zabaletan eta eten garbiarekin mintzo ziren hizkuntza IE zaharretan, edo azken bi mila urteotako euskaran, hedadura geografikoari, hizkeren arteko kontaktu etengabeari eta bestelako hainbat zertzeladari so, aski egoera diferentean baita euskararen kasua gainerako horienetarik, eurenak ere berdin-berdinak ez izan arren. Hau da, eszenario historiko egokiaz arduratzeaz landa eta hori baino lehen, bateraketa linguistikoak eta diakronistak bere esparru propioan —hizkuntzaren bilakabideari dagokionean— badu zer argudia eta zer azal EBZren azterketa historialarien eskuetan utzi baino lehen.

FONOLOGIA

1) T- > D- (hasierako leherk. ahostuntzea);
2) **-n- > -h-*;
3) bokal sudurkariak;
4) diptongoak;
5) **-n- > -n*;
6) **-r > -h*;
7) **hVh > øVh*; (eta **hC > øC*);
8) **e- > j / __ V*;
9) *$d_1$ > *ø / V __V*;
10) *a – o > o – a* metatesia aditzean;
11) *-n > -r / __#*;
12) **b-, *k- > ø-*;
13) *-l- > -r-*;
14) *-i/-u > ø / __#*;
15) -$V_3$ > *ø / __ #*;[261]
16) *-e, -o > -a / __#*;

MORFOLOGIA

1) *-n > -ø* (*jo, lo*)
2) *-tze* aditz-izena
3)**ezan* ALag.
4) *-tzai* artizkia aditz-izenean
5) *-kidi* aditzean
6) *-eta* ISren pluralean

Euskararen historiaurrean EBZ hori definitu beharra dugu eta, orobat, bilatzekoa EBZren kokagunea, bata zein bestea hizkuntzalaritza diakronikoaren hatsarriez baliatuaz. Hemen gutxieneko proposamena egin dugu: Nafarroan, Iruñetik ipar-ekialdera eszenario batean, Iruñetik mendebalerantz, bestean; ikusiko ondoko azterketek —hizkuntzalari eta filologoenek lehenik eta gizarte-eraketa eta populazio-mugimenduei buruzko historialarienek gero—, iradokizun hauek sendotzen ala deuseztatzen eta hobeagoez ordezkatzen dituzten.

EBZ onartzeak badakar haboro: forma kanonikoaren edo gramatikalizazioaren azterketak Mitxelenaren AEren berreraiketa osatzera eta «gorantz» berrikustera eraman gaituen bezala —AEM eta AEZ bereziaz, duela 2.000 edo 2.500 urte baino lehenagoko hizkuntza-egoera eskuratzeko asmoz—, orain «beherantz» ere hizkuntzaren historiaurrean eta protohistoriaren berreraiketa berriztatu beharra datorkigu. Diptongoekin, ozenen bokalarteko lenizioarekin edo hasperenaren bilakabidearekin, nahiz /l, n/ ondoko herskarien ahostuntzearekin argiro bermatzen den legez, euskararen berreraiketaren oinarri den *FHV*-n hainbat atal garrantzitsuk izan lezake berrikusi beharra eta ez jakin datazioari dagokionez —milurteko osoak ez bada—, zenbait mende aldatzea egokituko ote zaigun han edo hemen punturen batean —adibidez *n > h* bilakabidearekin: +/-1.000 > +/-350; cf. Lakarra 2013b, 2014 eta hemen § 4.6.2—; orobat, hainbat

261. Seguruenik *VDV > VøV* (bokalarteko ahostunen galera) geroago eman zen, erroan bederen (aurrizkian lehenago, *e* → *j / _V-* aurretik); are geroago hiatoak hausten dituen eta horri eman erantzuna dirudien V.V > VgV.

aldaketa morfologikoren bilakabidea, ALag-arena eta morfemen forma kanonikoaren kronologia lotuak agertzen dira hurbiletik edo urrutiagotik EBZrekin.

Komeni da EBZren izenaz edo izanaz ohar bat eranstea: Mitxelenaren *éuscaro* berbataiatuan 'batu' delakoak hizkuntzak egoera horretara iristeko egindako bidea adierazten zuen;[262] hots, beren artean lehen ezberdinago ziren eta V-VI. mendeetan bateratuak izan ziren hizkerak. Guk nahiago dugu gaia beste alderdi batetik hartu; edozein hizkuntza edo hizkuntza-familiatan legez, «EBZ» dialekto historikoen iturburuari edo horietara garamatzan lehen eszisioaren aurreko egoerari deritzogu, edozein ere dela hizkuntzak horra iristeko ibili duen bidea. «Zelta batu (zaharr)a» edo «Germaniko batu (zaharr)a» onartzeak ez dakar berarekin familia horietan inoiz batasun linguistikorik edo bestelakorik bilatzen zuen prozesurik onartzea (ezta kontrakoa ere, jakina); ulertzeko modu arruntena soil-soilik hizkuntza edo dialekto historikoen sorburutzat edo haustura aurreko egoera linguistikoarentzat dugun izendapen hutsa genuke. Hori bera litzateke «EBZ» horrekin lortu nahi genukeena, aitzineko edo gibeleko gertakaririk jakintzat edo suposatutzat eman gabe.[263]

Litekeena da oso, AEMren eta EBZren artean batasun-prozesu bat izatea eta are honen atzean beste batasun politiko bat edo gehiago egotea, d(ir)ela Mitxelenak proposatu datetan eta aipatu oinarrien gainean erakia(k), d(ir)ela bestelakoetan (ik. § 5.7ko azken paragrafoak). Hizkuntzalari bezala, ordea, gogoetagai horien aurretik, euskararen historiaurrearen berreraiketan 1981az geroztik ez aitzinhizkuntza bakarrarekin (AE), baina *gutxienez* birekin (AE eta EBZ) —zehatzago, hirurekin (AEZ, AEM eta EBZ)— aritu behar dugula markatzea eta behar horren froga linguistikoak aurkezteko premia lehenetsi dugu; halaber, eraikuntza horien zergatiak eta nolakoak hizkuntzaren beraren aldetik ongi finkatu eta zehaztu ondoren aztertu ahalko bide dira etekin handiagorekin —historialari eta gainerakoen laguntzaz, jakina— hizkuntzaren sistemaz landako arrazoiak eta xehetasunak, idiak orgaren aitzinean jartzeko arrisku gutxiagorekin.

---

262. Euskaraz *Euskara Batu Zaharra* deiturak *Euskara Batu (Berri)a* dakar gogora; hortik Mitxelena (1981a) hasierako gogoetak. Geroztik ia 40 urte igaro direlarik deituraren egokitasun edo desegokitasuna erabakitzerako orduan erosotasunak eskubide gehiago bide du aspaldiko oihartzun atzenduek baino; halere, beharrezko iruditu zaigu ondoko lerroetako zehaztasunak eranstea.

263. Oraingoz, gure azterketatik kanpo uzten ditugu zenbait azpifamilia IEren sorrera konbergentziaz azaltzeko Garrett-ek (2006) eta bestek egindako proposamenak; zalantzarik gabe, nazionalismoaren hedadurak ere (cf. Garrett 1999) izan bide zuen eraginik familia horretatik landa.

### 5.7. Adarreztatze bitarrak: lehendabiziko adabegiaren etenaz

Euskararen egoera modernoa deskribatzeko dagoeneko Bonaparte, Mitxelena eta Zuazoren sailkapenok sinkroniaren baten isla gisa izan dezaketen egokitasuna zalantzan jarri gabe, ikus dezagun zein litzatekeen euskalkien enbor diakronikoa, gainerako tradizioetan legez adarreztatze bitarrak sistematikoki ezarriaz.[264] Esan gabe doa kontaezinak direla egin litezkeen zuhaitzak, bai dialekto kopuruari, bai adabegienari, bai adarren mailei dagokienez; aukeraren maukera murriztuaz doa zehaztasun diakronikoak (eta geografikoak, jakina) gehitzean. Hemen lehen begiratu baterako, —hurbilketa-aldaketak lekarkeen ondorio zenbaiten behin-behineko aurkezpenerako, ez bestetarako— ematen dugun zirriborro parea (saioa errazteko funtsean Bonaparteren dialektoak dira (baina cf. § 5.9ko zehaztasunak), Ztik Err askaturik eta A gehituaz, nahiz agian Euskara Arkaikoaren eta Erdi Arokoaren azterketak bestetara eraman gaitzakeen):[265]

5. Irudia




264. Zuhaitz bitarretan dialekto batek berreraiketan duen pisua haren kokapenaren arabera erabakitzen da; ez da, beraz, berbera adabegi bakarreko, Bonaparte, Mitxelena edo Zuazorenetan bezala.

265. Aezkerak eta zaraitzuerak Frantzia eta Espainia arteko muga indartzen denean hartu zuten BNM eta BNErekiko autonomia (cf. Mitxelena 1964a, Zuazo 1998), eta horregatik etorkizuneko proposamen zehatzago eta osoago baterako utzi ditugu. Badirudi, aldiz —eta hau Azkue ondoko dialektologo guztiek ikusi dute— Err eta Zren arteko etena larriago eta zaharrago dela; hori berresten dute 1616ko Ros eta Etxarten arteko gutunek ere, dagoeneko markatu bezala Err-k oraindik izan ez arren ohituraz «betidanikotzat» eta definiziogiletzat diren zenbait ezaugarri (*gr-*, *zr-* taldeak eta *k-* erakusleetan; cf. § 4.3.6).

6. IRUDIA




Ba ote arrazoirik bat(ar)en (5) edo beste(a)ren (6) alde egiteko? Ez zait bururatzen Bren edo MEZren zein berrikuntza bereizle erabil litekeen horretarako eta Zuazok (1998) bere Mendebalaren ezaugarrien aurkezpenean emandako 20en artean hainbat modernoak edo oso modernoak dira: cf. «(1) *-ea* > *-a* bilakatzeko joera», «(2) txistukari sail bien neutralizazioa» edo «(7) Erakusleak izenaren ezkerretara eta eskuinetara erabiltzeko joera». [266]

Zren edo EkEZren alde 6. bokala (/ü/: cf. Egurtzegi 2014, 2017) erabiliko bagenu Err-rekin zailtasun larriak bide genituzke adar berean kokatzeko (cf. orain Hualde 2016). Badira, ostera, hainbat ezaugarri goiko MEZkoak baino zaharrago diruditenak. Hauen artean dira, markagarriro, /l/ eta /n/ ondoko herskarietako fenomenoak: E *altare*, Z *althá(r)e* : orok. *aldare* (B *altara*), Err-Z *boront(h)ate* : orok. *borondate*, Err-Z *alt(h)e* : orok. *alde*, etab. Ohiko azalpenak Zk eta Errk egoera zaharra gorde dutela —baita gainerako euskalkietako *hilko, Jainko* eta horrelakoek ere— eta enparatuek berritu dutela diosku; horrenbestez, balirudike, arkaismoa izanik, ezaugarri hau ezingo genukeela Z eta Err-ren nortasunaren alde erabili. [267]

Alabaina, bada aspalditik datuak azaltzeko beste modurik ere:

266. Dakidalarik, ez da erabilera honen adibiderik XVIII. mendearen 9. hamarkada arte (*Errosarioa*) eta orduan ere ez da beharrezko eta ezta nagusi ere; ez dut fenomeno horren hedadura zehazki aztertzeko saiorik ezagutzen baina gertakari hori gehienez ere XIX. mendetik aurrera eman bide da garaile atera den eskualdeetan ez baita guztietan izan inolaz ere.

267. Nolanahi ere, irizpide hori ezin da beti honelako zurruntasunez ezarri eta bi multzo soilekin arituaz berdintsu bide litzaiguke ErMEZ osoa EkEZtik berezi den ala, kontrara, hau ErMEZtik (bigarren hau dugu egiantzekoena, jakina). Ik. beherago testuan.

> Pero acaso se pueda suponer también que se trataba de un tipo de lengua en que la oposición quedaba suspendida en esos contextos, en los cuales las oclusivas se pronunciaban uniformemente sonoras (o lenes). En este supuesto, las nuevas formaciones y los préstamos que presentaban grupos formados por nasal o *l* + oclusiva se seguirían acomodando por bastante tiempo al tipo normal, siendo el roncalés y el suletino los dialectos que primero abandonaron esta práctica. Esto quiere decir, naturalmente, que *alte* y *galte* p.ej. eran palabras complejas que habría que analizar *al-te* y *gal-te* del mismo modo que según toda probabilidad *igante* era *igan-te* (*FHV* 355).[268]

Marka bedi —nahiz dakidala, ez Mitxelenak, ez beste ikertzailek ez duen geroztik 2. aukera garatu—, Err eta Z berritzaile egiten dituen hurbilketa hau koherenteagoa dela AErako proposatu *fortis*/*lenis* oposaketarekin eta baita «Mitxelena-Trasken» legearekin (ik. § 4.4.3.2): atzizkiren batean ahoskabe/ahostun txandakatzea denean, ahostuna da alomorfo zaharra; horrezaz landa, kokagune berean (/l, n/ ondoren, baina ez /r/ ondoren) txistukariak Euskal Herri osoan berandu arte frikari (= lenis AEn) ahoskatu izanak ere Mitxelenaren 2. azalpenaren alde egiten du. Aurrera baino lehen, bestalde, oroit bedi, azken mendeetan «Erdi-Mendebal / Ekialde Mutur» gisa aztertutako distribuzioa «Erdi-Mendebal / Err-Z / Ekialde» bilakatzen dela gogoan hartzen dugunean euskararen hedadura zaharra eta ipar-ekialdeko erromantzeetan Rohlfsek eta bestek eskuartean dugun puntuan aurkeztutako lekukotasunak eta euskal substratuaren bidez emandako azalpenak. Izan ere, ezinutzizkoa da Rohlfsen analisia (1977: § 445-446 eta 448-451) gaskoieran eta aragoieran herskariek izandako bilakabideaz: bokalartean herskari ahoskabeak ahostun bilakatzen ez diren lurralde bertsuan, *p, t, k* > *b, d, g* aurkitzen dugu *l, r* eta sudurkari ondoren, hitz-akabuaz landa:

> Sur les versant français cette prononciation est presque générale dans les trois vallées de Barétous, d'Aspe et d'Ossau. Il y a encore quelques rares exemples (*aude, croumba*) dans les villages situés entre Oloron et Tarbes (v. Saroihandy, p. 20). Au nord de Pau ce fait semble aujourd'hui inconnu. En Espagne l'aire embrassant ce phénomène est beaucoup moins étendue (§ 450).

Hori aski ez balitz, *ld, ng, mb* > *lt, nc* eta *mp* bilakatzen diren lurraldea ere oso zabala dugu: Lavedan, Bigorra eta Aure ibarrak Pirinioetan, iparrean Akize arte (eta inoiz harago) eta Landak ia osorik Golkoan. Bilakabide hauek hiperzuzenketa gisa azaltzen

268. Ondoren, Err eta Z inguruko erromantzeek ahostun bilakatzeak dakarren azaldu gabeko arazoa aipatzen du; arazo hori desagertuko litzateke, noski, berrikuntza Err eta Zrena dela pentsatuaz, ez alderantziz (Mitxelenak berak ere horrela dio hitzez hitz *FHV*n, kontsonantismoaren laburpenean).

direlarik, Rohlfsen ondorioak garbiak dira, lehenago Saroihandyk bezala ahostuntzea «influence de l'ancien substrat indigène» gisa berariaz aldarrikatuaz.

Badirudi, beraz, Err eta Z berritzaileak direla eta, hortaz, *l-n* ondoko herskari ahoskabe tratamenduak aski goizetik bereizten duela EkEZ ErMEZtik; ondorioz, EkEZ adabegia litzateke zaharrena, gero horren barnean bereizi zirelarik Z eta Err. Bada EkEZ adabegi nagusiaren aldeko beste ezaugarriren bat, *au* > *ai*, alegia.[269] Soilik hori gertatu ondoren jazo da /*wh/ > /f/: orok. *gauza, gau, afari* > Z-E *gaiza, gai, aihari* (< **gau-hari*); cf. *janhari, barazkari* (< **baratze* + *hari*), *askari* (< **hats* + *hari*), etab.[270]

B eta gainerako dialekto historikoak bereiz litzakeen muga ez da genetikoki diferentzia sakonenak biltzen dituena, Err-Z eta gainerakoen artekoa baino. Gero gauzak nola iritsi diren hiztun askoren eta zenbait dialektologoren begietan kontrako irudia ematera ikertu behar den eraldaketa baten historia da, ez betidaniko eta betiko banaketa eta sailkapena, alegia.

EBZ > ErMEZ + EkEZ, edo *X > EBZ [> MEZ + ErEZ] + EkEZ hautu honekin bat dator Iñaki Caminok azken urteotan burutu Ekialdeko hizkeren ikerketa: Zk eta Errk arkaismoak gorde, berrikuntza propioak garatu eta inorenak errefusatu dituzte beren historian zehar, gainerako euskaldunekin hartu-eman handirik ez zutelako seinale (Camino 2014: § 6.1). Azkuerekin Z eta Err arteko desberdintasuna L eta Grena bezainbatekoa zela pentsatu arren, Err izan da Zren bidelagun EBZtik (Camino 2014: § 8.1). Baliteke EBZ eta EkEZren artean tarteko hizkuntz egoera bat edo gehiago izatea Caminok galdetzen duen bezala, horrela pixkanaka EkEZk hasierako kideak galduaz historikoki aurkitzen dugun egoerara iritsi bitartean.

Aukera teoriko horrek berez analisi diakronikorako eraginkortasun handirik ez du: hori da hipotesi nuloa edozein hizkuntza eta edozein hizkuntz egoeratan —hizkerak etengabe banatzea, gu ohartu zein ez ohartu— eta froga positiboagorik ez den bitartean (Caminok berak ez omen du horrelakorik aurkitu [2014: § 9.2]) hobe dugu gainerako aukerak ere astiro miatzea. Halaber, ipar-hego doazen isoglosa eta dialektoetan oinarritzen badugu azalpen diakronikoa —Z-Err edo B mend.-A mend. bezala—,

---

269. *Eu* > *ei* biltzen du horrekin Mitxelenak, baina honek kronologia eta hedadura bera ote ditu?

270. Ondoriootan urruti gelditzen naiz Koldo Zuazorenetarik, gure hatsarre eta irizpideak ere urruti baitira: «El momento álgido de la fragmentación dialectal se encuentra, tal vez, entre los siglos XI y XII, al producirse la fractura del Reino de Navarra. Parece ser, sin embargo, que el área occidental se había distanciado del resto de las regiones vascas en una época anterior, quizás hacia el siglo VIII» (2010: 163; orobat 192. or.). Ez dut ikusten zein den baieztapen horien frogabide linguistikoa, ez baita aldaketa ez ezaugarri zahar historiaurrekoen ikerketarik eskaintzen horretarako; egoera modernoari buruz izan ditzakegun usteek (are egoera horren neurketa zehatzek) ez digute garai zaharrenetan hori bera genuela pentsatzeko eskurik ematen.

EkEZ eta EBZren artekoa ezingo litzateke «iparraldekoa» izan, jakina, mendebaleragoko horrelako lurralderen bateko edo batzuetako hizkera-geruza erantsia(k) baizik, hots, BN-GN ekialde edo hori eta L-GN mendebalekoa baizik.

### 5.8. Adarreztatze bitarrak: tarteko adabegiak eta euskalki modernoak

Ikusi dugu B ez dela lehen adarreztatzetik sortua; orain erantsi nahiko nuke ez dela tarteko adar nagusietarik ere: hots, aski erraz froga liteke EBZ eta Bren artean badirela beste adar bat(zuk) (bat bai, gutxienez). Beharbada, inorentzat ez litzateke arazo handiegirik Arekin batera Bz osatutako *aitzin-A-B onartzeko, beharbada An B hitz egiten zela zioen baina Oihenart eta batez ere Larramendi eta Mitxelena kontra zituen ustekizun zabalduagatik. Izan ere, 1958an Mitxelenak bien arteko ezberdintasun fonologiko, morfologiko eta lexikoak agerian jarri zituen, eta testuak eta horiei eskainitako ikerketak gehitu ahala ezberdintasunok areagotuz doaz.

Alabaina, iruditzen zait A eta B bi horiezaz gainera G ere —hots, Bonapartez geroztik horrela deitu ohi denaren zatirik handiena— biltzen duen Mendebaleko Euskara Zahar (MEZ) bat izan zela defenda litekeela. Horretarako erakutsi behar genuke badirela Bk izan litzakeen berrikuntza bereizleak baino garrantzitsuagoak funtzionalki eta hedatuagoak geografikoki; bi bururatzen zaizkit; *-a* + *-a* > *-ea* eta *egin* laguntzailea, hain zuzen ere. [271] Biek hartzen dituzte oso-osorik B eta A eta baita Gren zatirik handiena ere.

Gauzak honela, goiko zuhaitzotan B, A eta G MEZtik ateratakotzat jotzea hobetsiko nuke eta ez soilik lehen biak, G Erdialderako geldituaz, alegia. Izan ere, inork ez bide lioke Gri EBZren % 25 emango (2. mailako adarra adarkatze bitarrean) eta are % 12,5 (3.ekoa) ere gehiegi begitantzen zaigu; zeresanik ez, EBZtik zuzenean ateratako «erdiko adar» oso bat berarentzat egokitzeak (% 33) erabat lekuz kanpo dirudi.

Areago dena, ez da aztertu G noizdanik onartu beharko genukeen dialekto gisa baina berankorrenetarik izan dela bistakoa iruditzen zait Zuazok (1998: 217) harentzat ematen dituen ezaugarri definitzaileetarik atera gabe:

1) *-a* berezkoen egonkortasun eza;
2) *edun*-en orainaldiko *-e-* erroa;
3) *izan*-en orainaldiko *-e-* erroa;
4) *d* > *r* bilakaera [bokalartean];
5) *f* > *p* bilakaera;
6) *nor/zein* > *zein*;
7) *nijoa* tankerako *joan*-en adizkiak;
8) *al* galdera partikula.

---

271. Agian, bada beste arrazoi bat ere MEZ adabegiaren alde mintzo dena, nahiz ez duen gainerakoen distribuzio bera: Objektuko Komunztadura-Falta, alegia, B, A eta Gren mugetan gertatzen baita, An enparatuetan baino hedatuago, hori bai; cf. Lakarra (1986b, 2004).

(2), (3), (4) eta (5), bederen, Arabako euskararekin batera ditu Gk —baita (cf. Lazarragaren *dianeâ* famatua) (7) ere— eta (8) ez da agertzen Ubillos arte (cf. Mitxelena 1987d: 671); (1) ere soilik XVIII-XIX.etan zabaldu bide da. Aldiz, Ak Brekin batera dituen berrikuntzak askozaz zaharragoak dira.

Erdialdeko Euskara Zaharrerako —G MEZra esleiturik— L eta Nafarroako hizkera gehienak (HGN, IGN, MBN, EkBN) gelditzen zaizkigu. Talde guztiari legozkiokeen berrikuntza zaharrak aurkitzea ez da erraza, dela fonologian, dela morfologian. Esan gabe doa, arazo hau are larriagoa litzatekeela G ere ErdEZrako utziaz; aldiz, errazago litzateke berrikuntzak aurkitzea Lren adarretik kanpora: bokal erorketa ezberdinak, *-it*-ren hedadura analogikoa NNZ formetan eta (arkaismoa izan arren eta Zrekin partekatua) **iron* laguntzailea.

Lapurteraren kokaguneaz zeresan gutxi dut: horren berrikuntza bereizleak urri eta berankor dira Zuazoren analisian (eta bat gatoz harekin); alabaina, ez da ezaugarri askoren beharrik dialekto bi bereizteko. Zuazok (1998) L eta BN biak eremu bakartzat ditu baina aspaldidanik ezagunak dira BNren berrikuntzak —monoptongazioak (*nauzu* > *nuzu, gaitu* > *gitu*…), *gira, zira izan*en, *-a-* lehenaldian (*zagon*…) *-e-* orainaldian (*derama*…), *-er* datibo pluralean, *-au- izan*en datiboan…—, gorago aipatu **iron* laguntzailearen erabileraz landa.

Bereizkuntza horiek guztiak berrikuntza edo «hautapen» aski zaharrak dira —*zaitu*-tik Err eta Zaren *ztu*ra iritsi behar dugu eta *zütü*ra Zn *i-u* > *u-u* > *ü-ü* bilakabidearen bitartez—, protohistorikoak asko, eta nago, BN eta Lren artean G eta ingurukoenean baino bereizkuntzarako arrazoi diakroniko zahar gehiago badela, behintzat. Beharbada, azken garaiotan bateratze prozesu batean sartuak izan litezke —haatik, «nabarro-labourdin litéraire» delakoak ez liguke balioko— baina, horrela balitz ere, erlazio genetikoak goitik behera datozen adarrak dira eta hauen hierarkiak ez dira aldatzen, dena dela sailkapen sinkroniko modernoena.

Caminok markatu Z eta Err arteko hurbiltasun diakronikoa beste alderdi batetik ere indartu genezake: hartzen baditugu Miguel Ros erronkariarrak Gabriel Etxart zuberotarrari 1616-1617 bitartean bidalitako gutunak (cf. Bilbao *et al.* prestatzen), Bonapartez geroz dialekto horretan hain berezkotzat jotzen ditugun —eta euskaldun gehienei hain harrigarri egiten zaizkien— ezaugarriak ez dira ageri.

Lekukotasun berri honek erronkarieraren bilakabideaz dakarkigunean bada, jakina, zer zehaztu, baina ez da zalantzarik erakusleetako belarrarekikoak —dozenaka ø-ren aldean den bakarrak *g-* du [eta Sarasola (1983: 105-106)-ko 1569ko auzi bateko bakarrak ø-: *eta aren semeaz*]— (ik. 77. oh. eta § 4.3.6), aditzetako bokal erorketak eta kontsonante talde aipagarrien (/zr/, /dr/, /gr/) sorrera, edo aditz laguntzaile zenbaiten eraldaketaren datak berrikusi beharko ditugula (cf. Lafon 1955, Mitxelena 1953, 1954b, 1964a,

etab.). Hori, Err iparraldeko euskalkitik (ez Mendebaleko eta Hegoaldeko euskaratik) argiro bereizten duten ezaugarriei dagokienez: datiboko-komunztadura hautazkoa edo *-ara* destinatiboan edo zenbait subjuntibo sintetiko hor dira, aldiz, berrikuntza komun nahiz arkaismo, Err Zrekin eta gainerakoekin lotuaz.

### 5.9. Adarraztatze bitarra, isoglosa zaharrak eta EBZren aitzin-aberria

Azken bizpahiru mendeotan Frantzia eta Espainia aldeko euskal hizkerak banatuaz joan dira, baina muga politiko horren eragina berankorra da oso euskararen dialektoen kronologian. Mitxelenak 1964an eman zuen taula begiratzen badugu (*SHLV* 15-19), nabarmena da isoglosa zaharrak ipar-hego doazela —Err-Z *u–u* (< *i-u*) [272]: Zar *i-u*, Err-Z *ai* (< *au*) : Zar *au*—, lurraldeak beren mendebalera eta ekialdera banatuaz. Isoglosa berriagoak —Err-Zar bokal-erorketak : Z bokal-gorde, Err-Zar *h* > *ø* : Z *h*—, aldiz, mendebal-ekialdera doaz, Frantzia eta Espainiaren arteko mugarekin bat eginaz, gutxi gorabehera eta, ondorioz, iparraldera eta hegoaldera sortuaz hizkuntza-eremu ezberdinak. Hizkuntza-banaketa hauek XVI. mendeaz geroztikoak behar dute izan, orduan gogortzen baita muga hori eta, aldiz, gertakari hori baino lehenagokoak bestelakoak. Horrela, bereziki, *FHV*-n (160-161) aipatzen diren testuinguru ezberdin askotako bokal-erorketak: Zar-Err *tenbra/tenpra, kandra, -tra, -trik/-truk, gra, zra, zren, dra, nabla / ñabla, erden, ztu, ztie/ztei*… Ez da horien arrastorik 1616-17ko gutun erronkariarretan, XIX eta XX. mendeetako lekukotasun eta deskribaketa orokorrak gorabehera.

Isoglosa zaharrak iparraldetik hegoaldera edo ipar-mendebaletik hego-ekialdera etorri badira eta dialekto zaharrenen egituraketa bilatu nahi bagenu, «B», «G», «L», «GN», «BN» eta «Z» bezalako deiturak (geografia politikoari lotuak, ez linguistikoari) burutik kendu eta beste honakoak edo antzekoak landu beharko genituzke: ErMEZ (= Erdi-Mendebaleko Euskara Zaharra), ErEZ (= Erdialdeko Euskara Zaharra), MEZ (= Mendebaleko Euskara Zaharra), EkEZ (= Ekialdeko Euskara Zaharra) IME (= Ipar-Mendebaleko Euskara), HME (= Hego-Mendebaleko Euskara), MA (= Mendebaleko Arabera), EkA (= Ekialdeko Euskara), 6. figuraren ezkerraldean egin dugunaren antzera. Geografia politikotik are gehiago urruntzen da Lakarra (2014: 213, 10. figura)-n emandako aukera.

Honela laburtzen du Campbellek dialektologoen esperientzia aitzin-aberri bilaketan:

> In this model [«Linguistic migration theory»] we attempt to determine the minimum number of moves which would be required to reverse these migrations or spreads to bring the languages back to the location from which their later distribution

272. Caminok (2014: § 2.6) eta lehenago Peillenek oraindik XIV. mendean gauzatu gabe zela diote.

can be accounted for with the fewest moves. *In this way, by combining the location of maximum diversity and the minimum moves to get languages back to the location of the greatest diversity of their nearest relatives, we hypothesise the location of the homeland* (1998: 352; etzana geurea da [JAL]).

Zuhaitzaren adarrak begiratzen baditugu beren osotasunean, dentsitate geografikoa buruan dugularik, gehienak Nafarroan kokatzen dira (14tik 9) [273] eta, areago dena, Err, ErdNaf (= L gehi IGN) eta Hegoalde Muturreko nafarrera alde batera utziaz ere, bost (Iruñerrikoa, Aez, Zar eta bi BNekin) eta sei Err-rekin, Iruñetik Iparraldera lirateke. Ez da antzekorik —nahiz onartu lurralde horiek txikiago direla— Jaurerri, Probintzia edo Araban: hauetan banaketa dialektala arrunt arinagoa dela dirudi, Ekialdeko Nafarroan, Iruñetik iparrera Aturriraino bitartean baino.

Hor genuke, bada, EBZren eraikuntza-gunea eta bere hedaduraren abiapuntua? Baliteke; alabaina, diakronikoki hizkeren arteko axolazko banaketak zaharrenak direlarik, ez genuke seguruenik zuhaitzean mailarik apalena duten modernoenak hartu behar kontuan, justu alderantziz baizik: goiko adarretan baitira lehen etenak, gainerako guztiak baino askozaz lehenagokoak, eta zuhaitzaren gailurrera jo beharra dago EBZren aitzin-aberriaren («homeland»-aren) bila:

7. IRUDIA




Uraliar familiaren egituraren zuhaitza (Janhunen 2009: 65)

Hara Janhunenen ondorioak uralikoaren aitzin-aberriaz:

273. Lehendik aipatu izan da —baina ondorio diakronikorik atera edo landu gabe— Bonaparteren euskalki guztiek dutela Nafarroan partea, Bk salbu; «Nafarroa» hori oraindik asko muga eta zehaz bide liteke.

> The most uncontroversial information on the pre-historical location and movements of Uralic on the map is, however, provided by the internal taxonomy of the language family. *The very fact that the branchings of Uralic seem to become chronologically shallower the farther west we proceed suggests that the main direction of expansion has been systematically from east to west*. In other words, the Uralic language family seems to have been formed as a more or less binarily organised hierarchical chain, in which a new branch has always been formed on the western side of the previous ancestral branch. *By the classic principle of linguistic geography this also has to mean that the deepest boundary within the language family must correspond to the original location of the first break-up, that is, the linguistic homeland. This criterion places the break-up of Proto-Uralic in the region which historically forms the boundary between Samoyedic and its immediate Finno-Ugric neighbours (Khantic and Mansic).* The region in question is the borderline between the Ob and Yenisei drainage areas in Siberia, and until the contrary is shown, it qualifies as the most likely candidate for the Uralic homeland (2009: 71; etzanak neureak dira [JAL]).

Geurera etorriaz, samoyedoaren, finougrieraren eta aitzinuralikoaren lekua EkEZk (Z eta Err), ErEZk (BNek eta Zar) eta EBZk hartzen dute, Z-Err eta BNE-Zar artean izango litzatekeelarik —oraingoz zehaz ezin genezakeen garaian— isoglosa zaharrena eta, beraz, hortxe behar genuke kokatu[274] EBZren aitzin-aberria. Uralikoaren kasuan legez, gurean ere hobetsi dugun zuhaitzean mendebaleranzko adarreztatzeak lirudike nagusi.

274. Juanjo Larreak aspaldi adierazi zidanez, aski bateragarri gertatzen ahal da gure EBZren banaketa eredu hau abian den lan historiko batekin; zehatzago, azterketa historikoak aldeztuko luke VI-VII. mendeetan Iruñea eta Pirinioen artean entitate politiko garrantzitsu bat sortzea —gero Iruñeko Erreinuarekin lotura zuzena dukeena— eta horren hedadurak ikusi ahalko lirateke gainerako lurraldeetako onomastikan edo nekropolisetan. Hori litzateke Nafarroaren ipar-ekialdean sortuko litzatekeen eraikuntza historiko berriaren kronologia, baina horren isla hizkuntzan geroagokoa datekeenez, EBZren kronologia eta, hortaz, dialekto zatiketarena aski atzeratu beharko bide genuke. Batera zein bestera, hizkuntzalariok ezin saihes genezake geure egitekoa euskararen historiaurrearen kronologian.

[2016ko azaroan aurkeztu zuen Mikel Pozok tesia (*Vasconia y los vascones de la crisis del Imperio Romano a la llegada del Islam siglos V-VIII. Evolución sociopolítica y génesis de la gens effera* Juan Jose Larrearen zuzendaritzapean) IV-VIII. mendeetako Hegoaldeko Vasconiaren inguruan; zalantzarik gabe hurrengo urteetan lurralde eta kronologia horri buruzko historiografian zeresan handia izango duena; axal-axaleko irakurketa bat aski da erakusteko ez zaiola eraginik edo ondoriorik faltako K.o.-ko I. milurte osoko Euskal Herriaren egoera linguistikoaz ere. Lehen eta orain «ex silentio» frogaren gainean oinarrituriko «euskalduntze berantiarraren» aldeko edozein hipotesiren egiantzekotasuna birrintzea ondorio garrantzitsu eta bistako horien artean da].

### 5.10. Eranskina: Hitzatze berankorra euskalduntze berantiarraz eta EBZren ikuspegi berriaz

Badaezpada ere, esan dezadan EBZren sorrera Euskal Herri historikoaren ekialderantz gertatu zela esatetik ez dela jarraitzen Araba, Bizkaia eta Gipuzkoara (besteak beste) euskara *lehendabizikoz* K.o.-ko VI. mendeaz geroz iritsi zenik, ezagun den moduan koinerik famatuenaren hedadurak ez duela ukatzen Atenasen edo Korinton grekera lehenagotik mintzatu izana. Bidenabar, badakigu Greziako koinearen atzean zer zegoen (ik., adib. Rodriguez Adrados 1999: § 240-309), baina ez zer izan ote zen ekialdetik mendebalera EBZ edo euskara bera zabaldu omen zituena.

Araba-Bizkai-Gipuzkoan[275] VI. mendean oraindik mintzatzen omen zen zelta-erromantzea utzi (cf. Abaitua 2011: 21) eta garai haietan Rin ibaiaren ezkerretara zen hizkuntzarik basatienak ordezkatu zuela sinestea —ziztu bizian gainera, lehengo hizkuntza ahaztu eta garailearen lexiko nahiz gramatikan aurreko erdaldunenak ia arrastorik utzi gabe ordezkatu ere (cf. § 4.6.4)— ez da erraza, are gutxiago inongo froga linguistikorik aurkezten ez denean, eta kontran direnei (gutxi edo asko) kasurik egiten ez zaienean.

Mitxelenak hizkuntzalaritzara zekartzan Barbero eta Vigilen teoriak aski zaharkiturik ziren dirudienez 80-90etarako —izan ere, hein handi batean Caro Barojarengandik zetozen dagoeneko— eta alderdi askotatik pairatu zituzten kritika gogorrak, ezin esan litekeelarik aspalditik ikersail horretan «uhin nagusian» direnik. Hori bai, hamarkada hauetan haiek ordezkatzeko proposatu beste zenbait ere —demagun nekropolis aurkitu berri batzuek frankoen inbasioetako gudu odoltsuen ehorztegi gisa hartzen zituztenak— nekez har litezke azken hitz bezala: ADNak oraingoan bai balio izan du zerbaitetarako eta haren bidez ikusi izan da bertako familia oso asko direla —ez gudari solte kanpotarrak— ehortzirik nekropolietan, nahiz haietako zenbaitek «franziskak» eta beste bitxi frankoak eraman, batez ere tartean ziren handikiek.

Falta zen, halere, historialarien ikuspegi orokor bat berarekin lanabes arkeologiko ezagunen eta lekukotasun idatzien irakurketa ez hain nobeleskoa zekarkiguna, eta hori da lehenagoko Agustin Azkarate, Iñaki García Caminok eta, batez ere oraintsuagoko Juanjo Larrea eta Mikel Pozoren lanen bidez lortutakoa: hurbilketa berri honetan —eta besteak beste— zail da hor aurkitzen zirrikiturik «euskalduntze berantiarrarentzat», ez akitaniar inbasoreentzat (edo, 2. lubaki ahulagoa) inbasio nafarrentzat; bestalde, ez dirudi izan ez ziren inbasore horien helburu nagusia euskara zabaltzea izan zitekeenik ere (edo,

275. Egia esan, galdera Ipar Euskal Herri historiko osoari dagokio galdera; izan ere hor aurkitutako akitaniar lekukotasunak ia baztergarriak dira —ez Hegoaldekoak baino ugariagoak (cf. Gorrotxategi 1984)—, eta, beraz, ezin erabil litezke lurralde horietako euskalduntasuna frogatzeko Akitania ipar-ekialdeko eta Garonaren ertzetako ugariak.

are «goxoago»: euskararen edertasunekin lilluraturik mendebaleko erdaldun atsegin eta jakinzale haiek euskara plazerrez ikasi eta beraiena erabat atzenduko zutenik (3. lubakia).

Azken batean, Vasconian Erromaren ordezkari nagusi eta iraunkorrenak mendeetan —IV.a baino lehen eta baita gero ere, bereziki Mitxelenaren ereduan garrantzitsuen liratekeen V-VI.ean— bertoko «rusticani»ak eta horien ondoko edo horiei lotutako eliteak direlarik agintariak —Iruñeko apezpikua zelarik gizarte hartan gailur nagusia, nahiz kanporantz nahiz barrurantz begira—, asko aldatzen da eta ez soilik alderdi historiko-politikoan: ez dirudi AE ondoko dialekto-zatiketak beratzeko Mitxelenak beharrezko ikusten zituen populazio-mugimendu handirik izan zenik eta, areago dena, ez dirudi Inperioaren erorketak Euskal Herrian lehen suposatzen ziren ondorio linguistiko hain mesedegarriak ekar zitzakeenik (neurri batean, Inperioa ez zelako inoiz erori).

EBZren sorreraren azalpena ere berpentsatu beharko da, beraz, beharbada oinarri diferenteetarik abiatuaz, hizkuntzalariok bere egituran izan dituen aldaketak ikertzeari utzi gabe eta ustezko aldaketa historiko-politikoetan paralelismo mekanikorik bilatu gabe. Nolanahi ere, asko aldatu beharko bide dira Mitxelenaren eta gai honen inguruan aritutako gehienen oinarrizko ikuspegi historikoak —eta, beharbada, horien eredura egindako zenbait gogoeta linguistiko ere—; lehen § 5.5en egin dugun bezala, gure ustez EBZ ez «arrazoi historiko honengatik edo hargatik bateraturiko euskara» baizik eta soil-soilik «lehen banaketa dialektalen aurretiko hizkuntza, AEMrekiko berrikuntza garrantzitsu zenbait aurkezten zituena» bide genuke hurbilketa linguistiko zuhurrena, oraingoz Dixonen (1997) «punctuated equilibrium model» delakoaren bidez, Garretten (1991) konbergentzien bidez edo beste zein izan ote zitekeen hizkuntza egoera horretara eraman zuena erabakitzen saiatu gabe.

Berriro ere, hizkuntza-egoera horren historiaurrearen ikerketan laguntzeko komeniko bide da hizkuntzalariok geure lanak eginak izatea: AEMrekiko berrikuntzen, EBZren lehen etenen, EBZren garaiko berrikuntza komunen, EBZren lehen etenen ondoko mendeetako berrikuntza komunen (gehi Euskal Herri guztian edo gehientsuenean gertatu izan ote ziren) azterketa eta kronologia erlatibo nahiz absolutuak… sartzen dira horien artean. Horrelakoak izatetik urrutixko gara baina irudipen hutsa agertu behar badut, nago Larrea eta Pozoren eredu historikoan aldaketa linguistikoak (dela EBZren osaera, dela horren haustura) «longue durée»-ko prozesutzat hartu beharra dagoela, ez Erroma erortzean sortu eta abiada bizian garatutakotzat.

Behin baino gehiagotan esan izan den bezala, «Euskalduntze berantiarra» ez zen izan bere garai klasikoan sasi-izen linguistiko batekin bataiatutako hipotesi (hobe, sineskera edo, agian, amets?) estralinguistikoa baizik, eta ez da harritzekoa diakronista eta filologo gehienak ez berotzea horri aurre egiten, ez baitzen batere garbi egitekoa beraiei zegokien ere; izan ere, ez da erraxa argudioak biltzen —iturrien euskara eta euskaldunen inguruko

isiltasunaz landa— han oinarri ahulak eta argudio gutxi dituen sineskera edo dena delakoaren aurka.

Halere, Mitxelena, demagun, kontra agertu zen garbiro ahal zuen guztietan, eta ez bakarrik «ex silentio» edo «ex ignorantia» (Abaituak eta Unzuetak (2011) eurek aitortu bezala) argudioen aurka; ez zuen, zorigaitzez, horrezaz zabalago jardun. Oraintsu arte salbuespen markagarria Joakin Gorrotxategi izan da inor izatekotan, besteak beste euskaraz herskari ahoskabearekin gorde diren *-ika* toponimoen kasua plazaratuaz (belar ahoskabearekin erdaraz zegozkien ahostunen aurka) eta *Girku* nahiz *Getaria* erromantzearen sabaikaritzerik gabe eta euskaraz hartutako hitz hasierako —baina ez barneko— ahostuntzearekin; beren buruak «pisatzailetzat» jarri dituzten Unzueta eta Abaituari, aldiz, ez zaizkie «pisuzko argudioak» iruditzen (!) eta are «Pero la flaqueza de estos datos no hace sino menoscabar la teoría que se pretendía apoyar en ellos» (2011: 20) esatera ere iritsi dira.

Izan ere, aspaldi akitua zegoen arren, azken urteotan —Schulten, Sánchez Albornoz eta gainerakoena gehiegi haizatu gabe— Mikel Unzuetak eta Joseba Abaituak hartu dute berriro «Euskalduntze Berantiarraren» zuzia eskuan, ez argumentu sendoegiekin gehienen (eta nire) ustez. Argumentu historikoetan sakontzea ez dagokit niri eta, ikusi dugunez, ez litzateke zailegi teoria horren ahuleziak erakusten jarraitzea alderdi historikotik… lan hori hartu nahi duenik balego, bederen. Hurbilagotik dagokidanera itzuliaz, badirudi arestian —ez berariaz baina zeharka, lan teknikoagoek horretara eraman dituztelarik— zenbait filologo eta hizkuntzalarik ukitu dutela hipotesia: Valeriano Yarzak Bizkaiko eta Gipuzkoako toponimia zaharraren aldetik, Luis Mari Zalduak zeltatiko toponimoek gordetzen dituzten euskara zaharraren arrastoenetik, Jose Inazio Hualdek euskarak erromantzeari emandako zenbait hitzen azterketaren ondorioenetik…; helburuak eta moduak oso diferenteak direlarik, alabaina, guztien emaitzak «Euskalduntze Berantiarrarrentzat» gogorrak eta are suntsikorrak ere bide dira, izan zezakeen edozein oinarri linguistikori dagokionez, bederen, eta badirudi hori dela gai honen alderdirik garrantzitsuena —hizkuntzalaritzatik erabat atera eta beste norabait eraman nahi ez bada—, behintzat. [276]

---

276. Nahiz ez dudan, oraingoz, nire izenaz zerrenda hori luzatuko, markatu nahi dut erroen eta morfemen forma kanonikoa aztertzean ez nuela uste horren bidez zeren eta Euskalduntze Berantiarraren aldeko argudiorik bilduko nuenik (Abaitua 2017: *passim*). Eskertzen dizkiot J. Abaituari nire azterketa horren aldeko laudorioak, baina gogoeta askoren ondoren ere ez dut ulertzen zer ikustekorik duen FK batek edo FK baten aldaketak kontu honekin. Eztabaida zehatzagoak beste aldiren baterako gelditu beharko, baina neure burua zuritzeko zilegi bekit esatea ez Benvenistek bere IE erro teoriarekin azaldu gogo zuela barbaroen Erromako sarraskia eta ezta Sagartek aitzintxinerarenarekin Taiwanen eszisioa ere, etab.

Azken batean, «frogarik» hoberena «ex silentio» delakoa denean gogoan izan behar genuke isiltasuna etor litekeela lekukotasunak ozenegi ez mintzatzetik —eta hala izan da, zalantzarik gabe, Akitania iparraldeaz landako lurraldeetan— baina orobat hel litekeela gure gortasun edo itsutasun handiegitik ere, direla hauek halabeharrezkoak edota berenberegi bilatuak.[277]

**Irakurgai osagarriak**

Bouda 1950, Camino 2008b, Campbell 2011, 2013, Caro Baroja 1942-1943, Castaños 1979, Epelde 2014, Gómez 1994, Gorrotxategi 1987b, 2002, 2011a-c, Gorrotxategi & Lakarra 1996, 2001, 2013, Haas 1969, De Hoz 2011, Hualde, Lakarra & Trask 1995, Igartua 2002, 2008, 2011, Kitson 1996, Lafon 1999, Lakarra 1996a, 1998a, 1999, 2003, 2006a-b, 2008a, 2009a-b-c, 2011a, 2012, 2013b-c-d, Manterola 2006, prestatzen, Martinet 1950, Matisoff 1990, Mitxelena 1951, 1957a, 1961/1977, 1963, 1964a, 1973, Mitxelena & Sarasola *OEH*, Mounole 2011a, Petit 2007, De Rijk 1998, Sagart 1999, Sarasola 1997, Tovar 1954, Tovar *et al.* 1961, Trask 1977, 1997, Uhlenbeck 1942, Vennemann 1994, Zuazo 1998.

277. «Aizak, K.o.-ko VI. mendean autobideak eta semaforoak hituan dagoeneko» izan zen arkeologo eta prehistorialari ezagun baten erantzuna duela urte batzuk iberiarren Hegoaldeko atzerakadaz baliaturiko Akitaniarren inbasioez (cf. Villar 2005) galdetzean. Nago erantzun adierazgarri hura baliagarri dela «euskalduntze berantiarraren» aldaera zahar zein berrientzat ere.

3.

# EUSKARA ANTZINATEAN

Joakin Gorrotxategi

## 1. SARRERA HISTORIKOA

### 1.1. Atarikoa

Pirinioez bi aldeetako lurraldeak eta herriak Historiaren erresuman sartu ahala, modu ordenatuan, ekialdeko muturretik hasi eta mendebalderantz, euskararen arbasoari zuzeneko erreferentzia egiten zioten lekukotasun linguistiko zenbait agertu ziren; euskara, ordea, Erdi Aroaz geroztik ageri zaigu Euskal Herrian, eta XVI. mendeaz gero daude dokumentatuta hizkuntza horren lehen testuak, gutxi-asko luzeak. Aurrerago ikusiko dugunez, Antzinateko lekukotasun haietan, askotariko material onomastikoa baino ez da ageri; eta, orain artean, ez da dokumentatu Antzinateko euskarazko inolako testurik, ezta labur eta sinplerik ere. Euskarari atxiki dakiokeen Antzinateko material onomastiko horren lurralde banaketa ez dator guztiz bat euskararen lurraldearekin; izan ere, erdialdeko Pirinioen iparraldean dokumentatu zen batik bat, nahiz eta badiren antzinako baskoiei zegokien eremuko lekukotasun batzuk, baita Ebro ibaiaren eskuinaldekoak ere. Beste era batera esanda, Antzinatean, euskararen esparruak Pirinioen alde bietako eremu zabal bat hartzen zuen, Pirinioen erdialdean eta mendebaldean, eta Erromako aginte kolonizatzaileak eremu hura hainbat probintzia eta barruti administratibotan banatu zuen. Eremu hartako herrien izenak ere erromatarrek asmatuak dira, hein handi batean, hala nola *Aquitani*, *Convenae* edo *Celtiberi*; beste batzuetan, jatorrian izen mugatua edo periferikoa zena orokortu zuten herri oso bat izendatzeko moduan. Historian zehar hizkuntza bera (*vascuence*) eta haren hiztunak (*vascongados*, *basques*) izendatzeko erabili izan diren izenek *vascones* izen etnikoan dute jatorria; hain zuzen ere, izen hori erabili zuten erromatarrek Ebro ibarraren ezkerraldean bizi ziren jende batzuk izendatzeko. Izen hori ez da euskal izena, jatorriz, beraz, eta euskaldunek inoiz ez dute erabili izan beren burua eta hizkuntza izendatzeko.

Zuzenean erromatarren garaitik datorren edo literatura iturriek transmititu duten dokumentazio idatziaren baino lehenagoko denbora historiko guztia Historiaurrearen erresumari dagokio, eta arkeologiak berreskuratu eta interpretatutako materialak besterik ez daitezke erabili horiek argitzeko. Bada denbora tarte bat, ez oso luzea, zeinetan segurtasun handi samarrez konbina baitaitezke dokumentazio idatzitik ateratako izaera historikoko datuak eta hainbat mende lehenagora garamatzaten datu arkeologikoak: tarte hori Protohistoria deritzo. Denboran atzera egin ahala, ordea, gero eta zalantzazkoagoak dira era horretako loturak; hala, deskribapenek herrien alderdi material, ekonomiko, sozial, eta are ideologikoetara mugatuak behar dute izan, inongo hizkuntza jakinekin loturarik egin gabe. K.a. I. milurtekotik aurrera, hizkuntza indoeuroparren multzoa finkatuz joan zen Mendebaldeko Europan, beste hainbat familiatako hizkuntzak baztertuta —hala nola, etruriarra, iberiarra edo tartesiarra—; euskara ez zen multzo horretako hizkuntza, eta ikertzaile gehienek diotenez Mendebaldeko Europa indoeuropartzeaz aurreko mundu linguistiko batetik dator euskara. Hipotesi hutsa edo errazena hizkuntza hori indoeuropartzearen aurretikoa dela esatea da, beraz; baina horrek ez du esan nahi euskara zenik eskualde hartako gizaki modernoen herri primitiboaren hizkuntza —bibliografia tradizionalak Cro-Magnon deritzenena—, ezta Mesolitoan erdialdeko eta iparraldeko Europan Izotz Aro edo glaziazio osteko garaian barreiatu zirenena ere. Giza genetikari buruzko ikerketetan aurrerapen handiak egin dira azken urteetan —zientzialariek giza genomaren aldaerak interpretatzen asmatu izanari esker; bereziki, transmisio maskulinoko leinuak (Y kromosoma) eta transmisio femeninokoak (DNA mitokondriala)—, eta arreta handia eman diete euskaldunei, beren hizkuntzaren berezitasunari esker, hein handi batean. Genetista batzuek gaur egungo euskaldunen artean maiztasun estatistiko handia duten eta Europako kontinenterantz gradienteko barreiadura duten aldaera espezifikoen sorta batzuk aurkitu dituzte geneen sekuentzietan (haplotalde deritze); ikertzaileen arabera, Izotz Aroko eusko-kantauriar babeslekuko populazioaren hedapena izan zen horren eragilea: izotza urtutakoan bizitoki modura erabiltzeko baliagarri gelditu ziren lurralde berrietara zabaldu izana, hain zuzen. Aipatzekoa da, ordea, hipotesi horri laguntzeko erabilitako datu guztiak ez dituztela aho batez onartzen genetista guztiek, laginen urritasuna eta partzialtasuna direla eta; hala gertatzen da, esaterako, DNA mitokondrialaren V haplotaldearekin (Torroni *et al.* 1998, Izagirre & de la Rúa 1999). Horrez gainera, bestalde, nekez uztar daiteke DNA arkeologikoaren analisitik eratorritako proiekzioarekin —hau da, historiaurreko giza arrastoetatik ateratakoarekin, ez gaur egungo populazioarenarekin—. Zalantzarik gabe, ikerketa genetikoak ahalmen handiko tresna dira historiaurreko populazioen historia ebolutiboa eta filogenetikoa berreraikitzeko, haien harremanak eta balizko migrazioak ezagutzeko; baina ezer gutxi argi dezakete populazioen horien alderdi kultural eta linguistikoei buruz, alderdi horien transmisioa ez baita gauzatzen prozedura beren bitartez.

Historiaurreko populazioen hizkuntza ezagutzeko bide bakarra hertsiki hizkuntzalaritzari dagokion metodo bat erabiltzea da; hala nola, tokiko toponimiarik zaharrenaren analisia. Ildo horretatik, azken urteetan bi proposamen zabaldu dira Europako historiaurre zaharrena argitzen saiatzeko, aldaketari irmoen eusten dioten izenen analisian oinarrituta, ibaien izenen analisian, alegia. Kontua da, ordea, bi proposamenen emaitzek elkarri guztiz kontrajarritako ikuspegiak erakutsi dituztela; izan ere, Vennemannen aburuz (1994), Mendebaldeko Europako antzinako geruza linguistikoa euskalduna zen filiazioz, eta, aldiz, Villarrek (2005) dio indoeuropar arkaikoa zela, nahiz eta bi kasuetan glaziazioko eusko-kantauriar babeslekua hartzen den populazioaren jatorri eta abiapuntutzat. Lehen begiratuan, pentsa liteke Vennemannen ideia hurbilago dagoela lehen aipatu hipotesi hutsetik, eta Villarrena, berriz, behartuta dagoela, toponimo multzo gutxi-asko handi bat ematera ez ezik, familia linguistiko indoeuroparraren jatorria nahiz Paleolitoan eusko-kantauriar eskualdean izan zuen presentzia argitzera ere. Hipotesi linguistikoen oinarri gisa argudio linguistikoak eman behar dira, eta Europako antzinako toponimoak euskara abiapuntu hartuta azaltzeko ematen direnek ez dute inolako oinarririk hizkuntzaren historia ezagunean, ezta metodo estandar eta aurreratuen bidez egindako berreraikuntzan ere, liburu honen aurreko atalean ikusi denez.

**1.2. Protohistoria**

Antzinatean ustez euskara motaren bat hitz egiten zen edo gerora euskararen orube izan zen lurralde osoa ez zen uniformea, kulturaren ikuspegitik, Erromarekin harremanetan jarriz geroztik. Arkeologiak erakutsi duenez, harreman hori hasi baino gutxienez milurteko bat lehenagotik, Ebroren erdiko ibarreko lurren fazies kulturala ez zetorren bat Pirinioen iparraldeko edo Kantauri isurialdeko jendeenarekin, ez bizitokiei dagokienez, ezta hileta errituei dagokienez ere. Kantauriar mendikateak iparraldeko eta hegoaldeko isurialdeen artean bereizten dituen alboz alboko bi lurraldeei erreparatzen badiegu ere ikusten dira aldeak Brontze Aroko habitatean, hileta errituetan eta materialetan, nahiz eta ez daukagun hortik erabateko ondoriorik ateratzerik, datuen urritasuna dela eta. Burdin Aroan, bereziki bigarren fasean —hau da, K.a. v. mendearen erdialdeaz geroztik—, argiago ikusten da aldea. Hegoaldean, harresiz gotortutako hirigintza aurreratuko bizitokiak zeuden, etxeak kale harriztatuen arabera ordenatuta zituztenak eta funtzioen araberako esparru banaketaren zutenak, hala nola, etxebizitzak, biltegiak eta saltokiak. Aldiz, kantauriar isurialdeko kastroetan ez da halako ezaugarririk ageri. Hegoaldekoetan, labore ekonomia aurreratuaren zantzuak aurkitu dira, soberakinak bildu eta saltzen zituztela adierazten duten arrastoak. Ebroren erriberako Arabako eta Nafarroako hileta

errituei dagokienez, errauts ontzi esparru zaharren kulturan inspiratutako nekropoliak lekukotu dira; hildakoen errautsak zistetan (La Hoya) edo ontzietan (Castejón) ehorzten zituzten, gerrako ostilamenduarekin batera, eta halakorik ez da ageri, aldiz, Euskal Herriko mendebaldeko kantauriar isurialdean; bestalde, Pirinioetako lurretan, cromlech edo harrespilak erabiltzen zituzten, ostilamendurik gabe, tradizio megalitikoei jarraituz, baina bizitokiak falta dira. Arabako lurretan, bereziki mendebaldean eta Ebroren erriberakoetan, beti izan dute harremana mesetako jendeekin, eta haien eragin kultural nabaria jaso dute; halaxe ikusten da Brontze Aroko «ciempozuelos» deritzon motako zeramika kanpaniformean, Lehen Burdin Aroko Cogotas kulturan eta Bigarren Burdin Aroko Monte Bernorioko esparru kulturaleko materialetan. Inguru guztia izan zen Atlantikoko Brontzearen kultura eta merkataritza gunearen parte, Brontze Aroan; eremu horretan, garrantzi handia izan zuen mineralak erauztearekin eta merkaturatzearekin loturiko trukeak, hala nola urrearenak, eztainuarenak eta kobrearenak. Esparru horretara garamatzaten elementuak aurkitu dira, hala nola, mihi ezpatak eta eraztun bikoitzeko orpo aizkorak, Araban eta Nafarroan (Ortiz de Urbina 2006a, Llanos *et al.* 2009).

Burdin Aroko akitaniar arkeologiari erreparatzen badiogu, ohartuko gara joera kontserbadore eta arkaizatzaileagoa duela, oro har, Ekialdeko Pirinioetako eta Languedockeko mediterranear lurretakoa baino. Akitaniako lurraldean bertan, Garona ingurukoez bestelako profilak hartu dira mendi oinean eta mendebaldean: Gironden, fazies zeramiko guztiz berri bat agertu zen K.a. IV. mendearen amaieran, eta mendi oinean, berriz, hilobi asko biltzen zituzten tumulu egitura handien fenomenoa nabarmendu zen, adibidez Aubagnanen (Landak). Erromaren konkistaren aurreko azken mendeetan, mediterranear eragin handia jaso zuen Akitania ekialdeak, Garonaren erdi eta behe eremu osoan: berniz beltzeko zeramika asko jaso zen, ardo ontziak eta *elusates* eta *sotiates* deritzen txanpon motak; eta mendebaldearekiko desberdintasuna adierazten du horrek, eskuz egindako zeramika erabiltzen baitzuten han, artean, tornurik gabe egina, eta *tarusates* txanpon mota joten zuten, ekialdeko eraginik gabea (Gardes 2002, Callegarin 2009).

Arkeologiak deskribatutako ezaugarri horietako batzuk bat etor litezke iturri latindarrek emandako irudiarekin eta datuekin; hala nola Estrabonek Ebroko jende «zibilizatuen» eta Kantauri aldekoen artean egindako bereizketarekin, edo baskoien eta barduliarren arteko mugarekin, itxuraz bat baitator harrespilen hileta errituaren eremuaren mendebaleko lerroarekin. Baina, aldi berean, beste tribu edo leinu zehaztapen batzuek ez dute isla argirik arkeologian. Erregistro arkeologikoan, ez ditu ezerk bereizten karistiarrak eta barduliarrak; era berean, iturrietan bereizita ageri diren herri horietako bakoitzak arkeologikoki desberdinak diren lurraldeak biltzen dituzte, hau da, Kantauri aldeko isurialdea eta hegoaldea. Iturri latindarrek —bereziki, Zesarrek— aditzera

eman dute leinu asko zeudela Akitaniako ordekan eta mendi oinean, baina, bestalde, era berean diote leinu horiek guztiek bazutela halako batasun kultural bat, hizkuntzan, erakundeetan eta legeetan (*lingua, institutis, legibus*).

### 1.3. Erromak lurraldea konkistatzea

Pirinioen inguru guztia ez zen garai berean eta modu berean harremanetan sartu erromatarrekin. Hispaniara Ebro ibarrean barrena sartu ziren erromatarrak, kartagotarren kontra K.a. 206. urtean garaipena lortu ondoren penintsulan gelditzea erabaki zutenean, indigenen igurikapenak ezerezean utziz.

Erromatarrentzat, zeltiberiarrak ziren kezka nagusia; ezin izan zituzten menderatu K.a. 133. urtean Numantzia hartu zuten arte, eta aurrerantzean ere makina bat buruhauste eman zizkieten, aldian aldiko matxinadak zirela eta. Egoera horretan, baskoiak neutral ageri dira edo, are, Erromaren aliatu gisa; izan ere, iturriek —auzi militarrekiko bereziki sentiberak— ez zituzten aipatu Sertorioren gerretako gertaeren garaira arte (K.a. 82 eta 72. urteen artean); eta Ponpeioren alde jarri bide ziren ordukoan. Estrabonek diosku K.a. 75. urtean *Pompaelo* (Iruñea) sortu zuela Ponpeio Handiak, eta lehenengo glosa egin zuen.[1] Aurreko urteei dagokienez, badago baskoien jarrera ez-beligerantea berresten duen daturen bat: *Segia*ko herritar batzuk (Ejea de los Caballeros) eta beste *ennegenses* batzuk (kokaleku zehaztugabeko baskoiak) ageri dira Ascoliko brontze ospetsuan (*CIL* I$^2$, 709); brontze horretan agertzen da nola eman zitzaien erromatar herritartasuna Ebro iparraldeko herrietako gazte nobleen artean *Salduie*n (gerora, *Caesaraugusta*) errekrutatutako turma laguntzaile bateko zaldunei, Ponpeio Estraboni lagundu ziotelako Italiako Ascoli hiria hartzen (K.a. 89. urtea).

Ponpeio eta Zesarren arteko gerra zibilaren ondoren, Erromak bere kontrolpeko lurraldeak antolatzera bildu zituen bere indar guztiak, eta azken erresistentziak ezabatzera, Penintsularen iparraldeko lurraldeetan. Ordurako, bere esku zeukaten Pirinioen iparraldeko isurialdea ere, Akitaniako lurraldea, gero ikusiko dugunez, baina Erromak Bizkaiko Golkoaren ingurua baketu beharra zeukan, artean, eta Kantauriar mendikatea konkistatu. Andagosten (Jocano, Kuartango) berriki egindako aurkikuntza arkeologikoetan, K.a. 40-30 inguruan datatutako erromatar tresneria militarraren hondakinak agertu dira, eta horrek iradokitzen du bereiziriko troparen bat borrokan sartu zela. Seguru asko, gaur egungo Euskal Herrian bizi ziren leinuen konkistaren garaikoa izango da; izan ere, handik urte gutxira, Carieteak Elio Lamiaren bezero gisa

---

1. Strabo, III, 4, 10: πόλις Πομπέλων, ὡς ἂν Πομπηιόπολις: «*Pompelo*ko hiria, 'Pompeyópolis' esango bagenu bezala».

ageri dira (Ziteriorko gobernadorea, K.a. 25/24. eta 22. urteen artean), Erroman aurkitu ohorezko inskripzio baten arabera.

Erromatarrak K.a. II. mendean hasi ziren Pirinioen iparraldeko isurialdea ere menderatzen; ekialdeko Pirinioak eta Languedoc kontrolpean hartu zituzten, *Probintzia* osatuta (K.a. 120); *Domitia* bidea eraiki zuten (K.a. 119); eta, hurrengo urtean, *Narbo* kolonia sortu zuten (Narbona). *Probintzia* haren mendebaldeko mugetan, erdialdeko Pirinioetan, bete-betean, garrantzi handiko bi *ciuitates* zeuden, gerora *Aquitania*ren parte izan zirenak, Erromatar Inperioaren baitan: *ciuitas Consorannorum* eta *civitas Convenarum*. Bigarren hiriaren hiriburua, *Lugdunum*, Ponpeiok fundatu omen zuen, Sertorioren gerren ondoren, Hispaniako jendearekin, San Jeronimok askoz ere geroago kontatu zuenez. Erromatar garaiko lehen aztarna arkeologikoek, ordea, ez dute halakorik bermatzen eta Augustoren garaira garamatzate. Akitania, osorik, K.a. 56. urtean konkistatu zuen Zesarren ordezkari Krasok, Galietako gerrako ekinaldi batean, eta intereseko hainbat datu ageri dira Zesarrek ekinaldiari buruz egindako kontakizunean. Lehenik eta behin, Erromak bazituen inguru hartan aliatu batzuk aldez aurretik, eta haiek erraztu zioten ekinaldia. Gaur egungo Agen inguruan kokatutako *Nitiobriges* galiar herriak, adibidez, *Olloviko* izan zuen errege, erromatar herriaren aliatua zena. Bestalde, 55. urteko ekinaldian (BG 4, 12, 4), kontatzen du nola hil ziren bi anaia akitaniar kementsu, beren herriko errege eta erromatar herriaren aliatu zen gizon baten ilobak; seguru asko, *Lactorates* akitaniar herrikoak izango ziren, Garonaren hegoaldeko *Nitiobriges*en mugakideak. Lekukotasun horiek egiaztatzen dutenez, Probintziak segurtasun eremu bat zuen inguruan, Erromaren aliatu ziren herriek osatua; hauek italiar merkataritza eremuan parte hartzen zuten eta, aldi berean, Galiako barnealderagoko eremuetara hedatzen zuten Italiako produkzioa. Akitaniako eki eta iparraldeeneko muturra, beraz, erromatarren eragin esparruaren parte izan zen, konkista baino hainbat urte lehenagotik, heduarren eremua bezala. Zuzeneko lekukotasunik ez dagoen arren, oso litekeena da Italiako ardoaren eta produktuen salmentan aritzen ziren italiar *negotiatores*en presentzia egonkorra izatea. Ikusi dugunez, lurralde hartako txanponak bat zetozen denarioaren patroiarekin, heduarren eremuan bezala. Bestalde, Zesarrek dioenez, Krasok Sotiatesen hiria hartzean aurrez aurre izandako akitaniarrek —hau da, Akitaniako hego-mendebaldeeneko herriek— aliantza egin zuten Hispaniako Kantauri aldeko herriekin, zeinak baitzuten erromatar gudarostearen borroka tekniken ezagutza sakona, K. Sertorioren aginduetara borrokan aritu izanari esker. Erromaren eragina mertzenarioen bidez ere gauzatzen zela erakusten duen beste froga bat da. Ildo horretatik, litekeena da Kantauri inguruan aurkitutako txanpon altxor edo multzoak (Larrabetzu) nahiz Pirinioetakoak (Barcus) Sertorioren garaian erromatar fakzioek errekrutatutako mertzenarioei egindako ordainketak izatea.

## 1.4. Goi Inperioa

Kantauriko gerrak amaitu zirenean, K.a. 19. urtean, menderatutako lurralde osoaren antolaketa administratiboari ekin zion Augustok, Inperioaren antolaketa orokorraren baitan. Hispaniari dagokionez, gerrako inguruabarren ondoriozko zenbait eragiketa gorabehera —hala nola, *Arae Agusti* probintzia sortzea, edo *Transduriana*—, Hispania osoa hiru probintziatan antolatuta gelditu zen: senatari probintzia bat, Betika; eta Augustoren agintepeko bi, Lusitania eta Tarraconense. Azkenak hedadura handiko lurraldea biltzen zuen, Mediterraneoan hasi eta Galiziarainokoa, eta, hori zela eta, hainbat *conventus* banatu zituzten haren baitan. Gure eskualdea ondorengo bi barrutitan zatituta gelditu zen: a) zesaraugustarra, hiriburua Zaragozan zuena; haren barruan zeuden Ebro ibarreko beroiak, eta baskoiak, gutxi gorabehera gaur egun Nafarroako lurraldea eta Aragoiko Cinco Villas ingurua hartzen zutenak; eta Kantauri itsasorako irteera zuen *Oiasson* (Irun); eta b) kluniarra, hiriburua *Clunia* zuena (Peñalba de Castro, Coruña del Conde, Burgos); autrigoiak, karistiarrak eta barduliarrak gelditu ziren haren barruan. Batzuetan, barruti bati edo besteari atxikia izatea erabili izan da herrien izaera etniko eta linguistikoa zehazteko argudio modura; baina, seguru asko, Erromaren erabakietan, arrazoi etnikoek baino garrantzi handiagoa izango zuen delako herrien bilakaera politikoak, baita arrazoi praktikoek edo zerga esparrukoek ere. Zesaraugustar conventusaren barruan gelditu ziren Ebro ibarreko herriak, aspalditik erromatar moduetara lerratuak zeudenak, nahiz hizkuntza eta kultura iberiarrekoak nahiz hizkuntza zeltakoak izan, beroiak bezala. Aldiz, kluniar barrutiko herriek lotura estuagoa zuten beren tradizio indigenekin —hala, inperioan zehar onomastika indigena ugaria eman dute—, eta IV. mazedoniar legioaren bereiziriko tropen kokaleku izan ziren inperioaren lehenengo hamarraldietan.

Goi Inperioaren antolaketaren barruan, *civitas* edo hiria zen izaera juridikoko oinarrizko unitatea. Hiri bakoitzak, Erromarekin edonolako harremana zuela ere, modu autonomoan kudeatzen zuen bere eskumeneko lurraldea, betiere Estatuak ezartzen zituen arau orokor batzuk betetzeko betebeharrarekin. Unitate haietako batzuek, gutxi batzuek, kolonia izaera zuten, eta Erromakoaren konstituzio berdin-berdina zuten, erromatar herritartasuneko jendeak hartzeko sortuak izan zirelako, hala nola, *Caesaraugusta*. Beste hiri batzuek, jatorrian indigena zirenek, erromatar udal edo *municipium* izateko aukera izan zuten Augustoren edo Tiberioren agintepean, adibidez, *Calagurris*ek (Calahorra), jatorriz filosertoriarra eta zesartarra zenak, edo *Graccurris* eta *Cascantum* (Cascante) moduko latindar hiriek (*municipia latina*). Herri horiek guztiek erromatarren eran egin zituzten txanponak, tokiko magistratuen adierazpenarekin, eta udal konstituzio bat zuten. *Tarraga* izan ezik (agian, Los Bañales, Uncastillo), Pliniok federatu gisa sailkatu baitzuen hura, eskualdeko gainerako *civitates* guztiak *peregrinae* ziren, hau da, ez zeuden erromatar antolaketa sisteman txertatuta: autonomoak ziren,

berez, barne mailan, baina Erromak ezarritako zerga guztiak ordaintzeko betebeharra zuten, eta probintziako gobernadoreak kobratzen zizkien zergak.

Iturri klasiko batzuek —hala nola Pliniok, I. mendearen amaieran, eta Ptolomeok, II. mendearen erdialdera— hainbat *populi* edo *ethnoi* aipatu zituzten, nahiz eta Erromako Inperioaren antolaketaren barruan garai hartarako desagertuta zegoen haien funtzioa. Ofizialki zenbait laguntza kohorte izendatzeko erabiltzen ziren soilik: horietakoa zen, adibidez, *I Fida Vardulorum*, II. mendearen hasieratik III. mendearen ia erdialdera arte Britanian zerbitzua eman zuena. Uste izatekoa da kohorte hura K.o. I. mendearen bukaeran sortu zela, flaviar garaian, barduliarrekin; baina jatorria Bardulian zuten kide gutxi geldituko ziren talde hartan III. mendearen erdialdean, Britanian finkatuta mende eta erditik gora egin zuelarik. Laguntza unitateetarako gudariak lurralde konkistatu berrietako jendearen artean biltzea tresna eraginkorra zen Erromaren makina militarrarentzat. Hala, dirudienez, *Cohors Carietum et Veniaesum* batek Alpeetako eremua baketzen parte hartu bide zuen, Brescian (Italia) aurkitutako K.o. I. mendearen lehen erdiko idazkun baten arabera. Baina, bestalde, promozio juridiko pertsonalerako bitartekoa ere bazen, erromatar herritartasunik ez zuten eta, beraz, juridikoki *peregrini* ziren biztanleentzat; izan ere, hogeita hamar urtez zerbitzu militarrean jardunda, erromatar herritartasuna eskuratzen zuten, beraiek, haien emazteek nahiz ondorengo guztiek.

K.o. 74. urtean, Vespasiano enperadoreak latindar zuzenbidea eman zion Hispania osoari. Hala, Estatuak zenbait eskubide zibil aitortu zizkien gizabanakoei. Baina benetan interesgarriena zen Hispaniako *civitates* guztiak latindar zuzenbideak arautuko zituela aurrerantzean, eta, zuzenbide haren arabera, beren hirian goreneko magistraturan aritzen zirenek erromatar herritartasuna eskuratuko zutela, beraientzat, beren gurasoentzat nahiz familia osoarentzat. Aukera hori akuilu zutela, aberatsak hirien gobernuan parte hartzen hasi ziren, eta, horri esker, hirien loraldia gertatu zen flaviar garaitik aurrera, harik eta hirietan oinarrituriko goi inperioaren sistema krisian sartu zen arte, K.o. III. mendearen erdialdera. Eremu batzuentzat, Kantauriko kostaldearentzat esaterako, oparotasun aldiko garaia izan zen; izan ere, aurretiko kokalekuak berritu ziren, *Oiasso* esaterako, eta portu edo arrantza kokaleku berriak sortu ziren. Eliteak Goi Inperioaren antolaketa sisteman nola txertatu ziren adierazten duen erakusgarri bikainena Pirinioen erdialdeko mendi adarretako *Labitolosa* hiri txikia bide da (La Puebla de Castro, Huesca), inongo iturritan aipatu gabea: zehatzago esanda, hango forotik berreskuratutako ohorezko monumentuen multzo bikaina (Navarro *et al.* 1995, Ortiz de Urbina 2006b).

Eskualde osoko ekonomia jarduera nagusiak nekazaritza eta abeltzaintza ziren, eta paisaiari egokituriko ezaugarriak zituzten ustiategiek. Ebro inguruan eta Nafarroa erdialdean laboreak eta ardoa ekoizteko nekazaritza ustiategiak zeuden (*villae*); adibidez, Soto de Ramalete (Tudela), Irunberri edo Cara ingurukoak. Bestalde, Enkarterrietan,

Eskoriatzan eta Lantzen burdin meatzeak ustiatzen zituzten; galena zilardunekoak, Arbiunen (Zarautz) eta Arditurrin (Oiartzun); urre meatzeak, Ariben, etab. Harrobiak ireki ziren, Ereñon, besteak beste, eta gatzagak ustiatu zituzten, Añanan esaterako. Beroien lurraldean, *Tritium*en (Trizio), buztingintza industria handi bat zegoen, Hispania osoa *terra sigillata*z hornitzen zuena. Lurraldea galtzaden bidez komunikatuta zegoen administrazio guneekin, eta etengabe mantentzen zituzten bide haiek, hala nola *Oiasso*tik *Tarraco* probintzia hiriburura zihoana, *Pompaelo* eta *Caesaraugusta*tik barrena, eta Euskal Herria ekialde-mendebalde zeharkatzen zuena, *Burdigala* (Bordele) eta *Asturica* (Astorga) lotuz, merkataritza gune handia lehena eta Inperioko urre meatze garrantzizkoenen kontrol gunea bigarrena. Bide horrek, Landak igarota, Pirinioak zeharkatzen zituen Orreagatik, eta Iruñera iristen zen; ondoren, Sakanatik Arabara jotzen zuen, eta, han, *Veleia* karistiar hiriburutik igaro, eta Pancorboko haitzartetik goi ordokira sartzen zen. Ez dugu ahaztu behar, bestalde, lurreko bideak bezain garrantzizkoak edo are garrantzizkoagoak zirela itsasbideak eta ibaibideak. Urrunerako merkataritza zen, hain zuzen ere, Goi Inperioaren bereizgarri nagusietako bat, eta itsasontzien bidez egiten zuten.

Augustok finkatutako probintzia antolaketan, Zesarrek konkistatutako Akitania —hegoaldean Pirinioek, mendebaldean Atlantiko Ozeanoak eta ipar-ekialdean Garona ibaiak mugatutako triangelu baten modura deskribatua— iparralderagoko lurralde bati atxikita gelditu zen, Garona eta Loira ibaien arteko eremuari hain zuzen: *provincia Gallia Aquitania* zeritzon lurralde hari. Probintzia handi hura Galietako parte zen, *Lugdunensis* eta *Belgica*rekin batera; Galietako hiriburu *Lugdunum*en (Lyon), inperioa gurtzeko santutegi bat ezarri zuen Augustok (*ara Romae et Augusti*) eta Galietako *civitates* guztiek ordezkariak bidaltzen zituzten santutegi hartara. Enperadoreak izendatutako legatu propretore batek gobernatzen zuen probintzia. Ez dago argi zein zen Akitaniako probintzia hiriburua: oro har, *Mediolanum* (Saintes) zela diote adituek, julio-klaudiotar garaiko monumentu bikainengatik eta Lyon eta Saintes zuzenean lotzeko Agripak taxututako errepide sarearen diseinuagatik. II. eta III. mendeetan, berealdiko garrantzia hartu zuen Bordelek: konkistaren amaieran, *Bituriges Vivisci*ek kokaleku zuten *emporion* edo merkatu bat besterik ez zen, baina, halako indarra hartu zuen, probintziako hiriburu bihurtu baitzen garai haren amaieran. Eztabaida sortu izan du Akitaniako hegoaldeko hirietako ordezkariek Lyongo batzar nagusian bide zuten presentziaren auziak. Ez dago santutegi hartan Akitaniako apaizik bazela adierazten duen lekukotasun epigrafikorik, ez Lyonen ez Akitaniako inongo hiritan. Batzuen ustez, Lyongoaren tankerako beste santutegi bat zegoen *Lugdunum Convenarum*en (izena benetan du adierazgarria), eta hara elkartzen bide ziren Akitania hegoaldeko flaminak. Probintzia hartan, Tarraconensen ez bezala, ez zen egon inongo legiorik.

Estrabonek (IV, 2) kontatu zuenez, hogei akitaniar herritik gora zeuden, gehienak txikiak eta ilunak; nolanahi ere, ez zituen hauek besterik aipatu, berariaz: *Tarbelli* eta *Auscii*, biak ere osoa ahaltsuak, *Convenae* eta Bordeleko *Bituriges*, zeinei buruz esaten baitu ez zirela Akitaniako konfederazioaren parte. Zesarrek, berriz, konkistari buruzko kontakizunean, gerora iturriek aipatu ez zituzten akitaniar herri batzuk aipatu zituen, hala nola, *Sotiates*, *Ptianii*, *Gates*, *Garumni* eta *Sibuzates*, azken hori Zuberoarekin identifikatua. Hurrengo zerrenda Pliniorena da (IV, 19), eta hor agertzen dira lehen aldiz *Venarni* (Bearno) eta *Basaboiates* (*Vasates* eta *Boii* arteko lotura) herriak. Gai interesagarria da Behe Inperioan Akitania hegoaldea izendatzeko erabili zen eta Hazparneko idazkunean (*CIL* XIII, 412) agertzen den *Novem Populi* «bederatzi herriak» izendapenaren jatorria. Idazkun horretan, enperadoreari «bederatzi herriak» gainerako galiarretatik bereizi zitzan eskatzeko ordezkaritza batek izandako arrakasta oroitzen da; Augustoren garaian datatu dute batzuek, eta K.o. III. mendean, beste batzuek, zuzenago. Nolanahi ere, agian, *Tarbelli*, *Tarusates* edo *Aturenses*, *Auscii*, *Bigerriones*, *Boiates*, *Convenae*, *Consoranni*, *Elusates* eta *Lactorates civitates*en konfederazioaren jatorria inperioaren hasierako garaietan bilatu beharko genuke. Izan ere, nolabaiteko batzar komunen bat eduki bide zuten Hazparneko idazkunean aipatzen den ordezkaritza hari enkargua ematea erabakitzeko (Duval 1975).

Goi Inperioak iraun zuen bi mendeetan, Akitania hegoaldea nekazaritzara emanik bizi izan zen, Gaskoinia aldeko ordokiko lur oparoetan, eta abeltzaintzari eta mendiko baliabideen ustiapenari emanik, Pirinioetan; jarduera horien artean, bereziki azpimarratzekoak dira Convenatarren marmol harrobiak, bereziki Saint-Béatekoak, kalitate bikaineko materialez hornitu baitzituzten Akitania osoa eta Hispaniako muga eremuak, baita Pirinio Atlantikoetako burdin eta urre meatzeak ere, eta terma ugariak, zeinei esker sortu baitziren *Aquae* zeritzen hiriak, Akize, Bagnères-de-Bigorre eta Luchon, esaterako.

Bi bide nagusi zeuden: Bordele eta Astorga lotzen zituena, lehen aipatua, eta Bordele eta Okzitaniako Tolosa lotzen zituena, lurraldetik bazter batera. Saint-Bertrand-de-Commingeseko idazkun batek erakusten duenez, *Quadragesima Galliarum*aren postu bat zegoen han; hau da, probintziako mugetan salgaiei iragaitza zerga edo bidesaria ezartzen zitzaien gunea, zeinak iradokitzen baitu bazela Aranetik Hispania alderako merkataritza.

### 1.5. Behe Inperioa

III. mendearen hasieran, krisian sartu zen lehenengo bi mendeetan indarrean egondako sistema, administrazioan karrera egiteko irrikak mesedetutako eliteen agintepeko hirien autonomia oinarri zuena. Inperioak izugarrizko gastuak zituen, baina, hala ere, ez zen

mugetako segurtasunari eusteko gai: partiarren kontrako gerretara bildu zituen indar gehienak, eta horrek ahuldu egin zuen Rhineko frontea, zeinetatik sartu baitziren talde armatuak eta eragin baitzuten izua Galietan, eta baita Hispanian ere. Egoera politikoak nabarmen egin zuen okerrera, eta anarkia militarraren garaia deritzona hasi zen. 260. eta 274. urteen artean, «Galiar inperioa» sortu zen, Erromaren aginteari men egiten ez zioten enperadore batzuen eskutik. Hispania galiar enperadoreen agintepean gelditu zen; haietako lehenak, Postumok, Hispaniarekiko komunikazio bidea mantentzeko ardura hartu zuen, Arabako bi miliarriek adierazten dutenez.

284. urtean Dioklezianok bereganatu zuen agintea, eta tetrarkiaren erregimen politikoa ezarri zuen; horrela, antolaketa sistema berri bat finkatu zen Inperioan. Goitik behera birmoldatu zuen probintzia sistema: probintzia gehiago eta aurrekoak baino txikiagoak eratu zituen, eta diozesi izeneko barrutietan bildu. Hispania Ziterior probintzia hirutan banatu zen, *Gallaecia*, *Carthaginiensis* eta *Tarraconensis*, eta hiru horiek Hispanietako diozesia eratu zuten, *Lusitania*, *Baetica* eta *Mauritania Tingitana*rekin batera, hiriburua Meridan zutela. Goi Inperioko Akitania ere hirutan banatuta gelditu zen: *Aquitania Prima* eta *Aquitania Secunda*, Garona iparraldeko galiar herriak biltzen zituztenak, eta *Novempopulania*, bat datorrena Zesarren eta Estrabonen Akitania etnografikoarekin. Hiru probintzia horiek hegoaldeko Galietako diozesia osatu zuten, *Narbonensis Prima* eta *Secunda*, *Viennesis* eta *Alpes Maritimae*rekin batera; diozesiak hainbat izen izan zituen Behe Inperioan, hala nola, *Viennensis*, hiriburua Viennen zuelako, edo *Septem Provinciae*, zituen probintzien kopuruagatik. Dioklezianoren erreforma Konstantinok osatu zuen, hainbat diozesi bilduz prefetura baten barruan; hala, Britania, Galia, Vienense eta Hispanietako diozesiak Galietako prefetura zeritzon egituran batuta gelditu ziren, Treverisen bizi zen pretorio prefektu baten agintepean. Dioklezianoren eta haren ondorengoen kezka nagusia Estatuaren diru-sarrerak bermatzea zen, Inperioaren mugak defendatzen ziharduten unitateen gastu militar izugarriari aurre egin ahal izateko. III. mendeko krisiaren eraginez, hutsik gelditu ziren hiriak. Menderatutako lurraldeen ustiapenean eta eskala handiko merkataritzan oinarrituriko ekonomiak nabarmen egin zuen atzera, eta tokiko edo eskualdeko ekoizpenera mugatuta gelditu zen. Aberastasuna latifundioen jabetzaren bidez adierazten zen. Agintea zerga presio izugarria ezarri zien Inperioko herritar guztiei, bai dirutan bai salgaitan, *annona*, gudarostearen premiak asetzearren. Egoera horretan, garrantzi estrategiko itzela hartu zuen Merida eta Treveris arteko lotura bideak, Astorga-Bordele arteko bidea aprobetxatzen zuenak; garrantzi horren isla da, hain zuzen, *Veleia* (*cohors I Gallica*), *Pompaelo* eta *Lapurdum*en (Baiona) unitate militarrek izandako presentzia. Hiri batzuk bertan behera gelditu ziren, adibidez, *Labitolosa*, eta guztien itxura aldatu zen, gutxi-asko: hirien perimetroa murriztu zen; eta abandonatu egin zituzten espazio publiko handiak —esaterako, termak—, eta horien

ordez espazio xume eta pribatuagoak eraiki ziren. Hiri asko harresitu zituzten, bereziki Astorga eta Bordele arteko bidean, IV. mendearen erdialdera, arrazoia argi ez dagoen arren: seguru asko, razzien nahasketa gertatzeko beldur izango ziren, alde batetik, eta, bestetik, handitasuna adierazi nahiko zuten; izan ere, San Isidororen hitzetan, «harresiak ematen baitu hiriaren heina». Ekialdeko Akitaniako hiriak, *Lugdunum* adibidez, beranduago harresitu zituzten, V. mendearen hasieran, bisigodoak Garonaren erdialdean eta behealdean finkatzen hasita zeudela.

IV. mendea garai egonkorra izan zen, oro har, eta zibilizazioaren loraldia gertatu zen *possesores* handiek beren latifundioetan eraikitako *villae* aberatsetan, hala nola, Akitaniako Montmaurin eta Arnespen (Valentine), edo Arellano o El Ramaleten, Nafarroan. Baina, aldi berean, garai hartan, populazioaren parte bat haitzulo eta harpeetara itzuli zen bizitzera. Fenomeno berria izan zen, orobat, kristautasuna; orduantxe hasi zen agertzen, hirietan. Hispanian, lekukotasun goiztiarrak daude Calahorrari buruz —hain zuzen ere, hango martiriei gorazarre egin zien Prudentzio poetak—, baina lehenengo lekukotasun arkeologikoak V. mendekoak dira, hala nola, Iruñeko katedralaren oinarriko tenplu paleokristaua, Buradon Gatzaga eta *Veleia*ko krismoidun zeramika. Teodosioren agintaldian erlijio ofizial gisa kristautasuna ezarri zelarik, apezpikutegiak ezarri ziren hiri nagusietan, V. eta VI. mendeetako kontzilioen aktetan agertzen denez (Torregaray 2006).

V. mendean garrantzi handiko aldaketa politikoak jazo ziren. Hasteko, alano, bandalo eta suebiarren inbasioa gertatu zen, 406an, eta suntsitu egin zituzten Galiak eta Hispania. Bisigodoak Garonako eskualdean kokatu ziren 418an, Erromaren aliatu gisa, mugen eta barne segurtasunaren defentsan laguntzeko xedez. Hala, gainerako germaniar herrien kontra borrokatu ziren; Katalauniako Zelaietako Guduan parte hartu zuten (451), Atilaren kontra; eta bagauden mugimenduaren gizarte matxinadak zapaltzeko laguntza eman zioten aristokrazia latifundistari, Galian nahiz Tarraconensen. Baina Estatuaren barruan aginte autonomoa zuten, beren erregeari men egiten zioten, eta arriotar fedeari eutsi zioten, harik eta Teodoriko II.aren agintaldian (453-466) eta Eurikorenean (466-484) erresuma bisigodo independentea eratzea lortu zuten arte, de facto. Erresumak Okzitaniako Tolosan zuen egoitza, eta Galia hegoaldearen eta Hispaniaren gaineko nagusitasuna zuen. Tolosako erreinua 507. urtean desegin zen, Klovis errege frankoaren osteek Alariko II.a erregea menderatu eta hil zutelarik, Vouilléko guduan. Bisigodoak Galiatik Hispaniara egotzi zituztelarik, Toledoko erresuma sendotzera bildu zituzten beren ahalegin guztiak, eta, hurrengo bi mendeetan, musulmanen inbasiora bitartean, ezin izan zuten baskoien lurren gaineko kontrol eraginkorrik bideratu, suebiarren eta bizantziarren kontrako borroketan arrakasta militarra izan bazuten ere. Rekaredo katoliko egin ondoren, gizarte hispaniar-godoaren oinarri kulturalak finkatu ziren, eta ideia haiek oinarri izan zituen Errekonkistak. Bestalde, frankoek nagusitasun teorikoa

izan zuten hegoaldeko Akitaniaren gain, harrezkero Wasconia zeritzona; xede horrekin, hain zuzen ere, Baskoniako Dukerria sortu zuten, zeina bihurtu baitzen, luzera, aginte autonomo. Aldaietako (Langara Ganboa, Araba) edo Buzagako (Elortz, Na) nekropolietan berriki egindako aurkikuntza arkeologikoek, VI-VII. mendean datatuek, jatorri franko-akitaniarreko material ugari eman dute (Azkarate 1999).

## 2. LEKUKOAK

### 2.1. Lekuko zuzenak

Antzinatetik heldu zaizkigun lekukoak, urriak izateaz gain, era guztietako zailtasunez beterik daude. Batzuk iturri klasikoen bitartez ezagutzen ditugu, beste batzuk garai, toki eta idazkera ezberdinetako inskripzioen bitartez. Pare bat testu alde batera utzita, izen propioak besterik ez dira. Gauzak hala, datuak ezin dira bere gordintasunean hartu dokumentazioaren testuinguruari eta euskararen historia ezagunari erreparatu gabe.

Gauza jakina da lekukoak utzi ahal izateko gizarteak era bateko edo besteko idazkeraren bat ezagutu behar duela. Hispanian, pupulu batzuek ez zuten inolako idazkerarik ezagutu eromatar garaian latina eta latin alfabetoarekin topo egin zuten arte. Baina penintsulako mediterraneo aldean, Katalunia eta Ekialdeko Pirinioak barne, K.a. IV. mendetik aurrera gutxienez idazkera berezi bat erabili izan zen bertoko hizkuntza, iberiera alegia, idazteko. Idazkera hori II. mendetik aurrera zeltiberiarrek erabili zuten bere hizkuntzan zenbait idazkun egiteko, Augustoren garaian gutxi gorabehera latin alfabetoa erabiltzen hasi ziren arte. Ebro ibarraren erdialdean eta Piriniotara bitartean, hau da Baskoien lurraldetan batez ere, iberiar idazkeraz idatziriko zenbait lekuko agertu da. Gehienak izen propioak soilik daramazkiten txanponak dira, Hispaniako beste tokietan aurkitutakoen antzekoak, txanponak jo dituzten herrienak direlarik normalean agertzen diren izenak, agintarienak zenbait kasutan agertzen badira ere. Txaponez gain pare bat testu ediren dira Baskoien eta Akitaniako eremuetan aurrerromatar hizkuntzez idatziak. Kontua da bertoko hizkuntzari buruz ematen duten informazioa ez dela zoritxarrez bere izaera bereziarengatik guk espero genukeen bezain onuragarria.

Inskripzioen artean zaharrenak Landetako Vielle Aubagnango hilobi aberats batean aurkitutako zilarrezko bi fiale edo plater zabal puskatuetan idatzitakoak dira. Arkeologoek diotenez, hilobiko beste materialaren arabera, piezak K.a. III. mendetik II. mendera bitartekoak izan daitezke. Bietako batean, orain galduta dagoen zatian, *anbaikar* hitza irakurtzen zen, bestean nekez eta zalantzaz ]+*titeeki*[ edo ]*betiteen*[ irakur zitekeen bitartean. Untermannek lehendabiziko hitza Araban erromatarren garaian lekukotzen zen *Anbaicus* pertsona izenarekin lotu zuen, bertoko jendearen izenen lekuko izan

zitekeelakoan, baina ikerketa berriago batzuek agerian jarri dute, Tivissan aurkitutako fialekin duten antz handia kontutan hartuz, Aubagnango fialeak, inskripzioak eta guzti, Mediterraneo aldeko iberiar lurraldetan ekoiztu zirela. Ildo honetatik bigarren testu ondatuak ere azalbide onargarria har dezake iberieraren ikuspuntutik, artisauen formula baten aurrean gaudela pentsatzen badugu, hots, izen propioa + *-te* atzizkia + *eki*[*ar*] hitz ezaguna. Bestalde ]*anbaikar* edo ]*binbaikar* hitzak badu iberieraz parekotasun zuzenik. Analisi berri hauen ondorioz Aubagnango fialeak ezin dira bertoko hizkuntzaren lekukotzat hartu, bertoko jauntxoek urrutiko ontzi bitxiak eta ondareak eskuratzeko zuten ahalmenaren lekukotzat baizik.

Bigarren lekukoa Iruñea ondoko Arangurenen aurkitutako brontze zatiaren bi aldetan idatziriko testua da. Sertorioren aurkako guda gertakizunetan kokatzen da. Testua horrenbesteraino dago ondatua non zaila egiten zaie adituei zein hizkuntzatan idatzia dagoen ere erabakitzea. Brontzean idatzi izanak, berez, zeltiberieraren munduarekin lotuko luke errazago iberierarenarekin baino, iberiarrek beruna erabiltzen zutelako beren idatzietarako; baina irakur daitezkeen hitz zatien artean ez da zeltiberieraren aldetik azal daitekeen ezer ere ez edireten. Era berean euskarak ere ez du batere languntzen hitz horien aztarnak hartzen. Horrexegatik aukerarik zuhurrena iberierazko testua dela pentsatzea litzateke, erabaki honen arrazoi nagusia, jakina, iberierari buruzko ezaguera ezean oinarritzen bada ere. Askoz ere zailagoa da jakitea testua bertan idatzitakoa edo kanpotik ekarritakoa ote zen. Iruñearen sortze edo fundazioaren ekintzekin zerikusirik balu testuak, hara iberiar gudari batek aldean eramandako testu bat izango litzateke. Bestalde, pieza horretan uztartzen diren bi fenomeno kultural ezberdinak kontutan hartzen baditugu, alde batetik zeltiberiarren artean bakarrik normala zen brontzea erabili izana eta bestetik iberiera ematen duen hizkuntzaz idatzi izana, alegia, pentsatzekoa da testua eragin kultural biak jaso zuen lurraldean idatzi zela, hau da, Baskoien lurraldean.

Hirugarren lekukoa Andelo (Muruzabal Andion) aztarnategian K.a. I. mendearen azken zatian datatzen den mosaiko batean idatziriko testua da: *likine abuloŕaune ekien bilbiliaś*. Oso urriak dira mosaiko gainean idatziriko testu paleohispaniarrak, horregatik esanguratsua da dudarik gabe Caminrealen (Teruel) aurkitutako mosaikoarekin duen antz handia. Mosaikoek erakusten duten teknika eta hornidura berdinak izateaz gain, testuaren funtzioa eta egitura ere oso antzekoak dira: *likinete usekeŕteku ekiar*, dio Caminrealekoak. Badaude, hala ere, aldaera interesgarriak; esaterako Caminrealeko testuak *ekiar* dakar, gainontzeko iberiar testuetan erruz agertzen den hitza, Andelokoak *ekien* duen bitartean haren ordez. Jende gehienak pentsatzen duena onartzen bada, hau da mosaiko hauetan idatzita dagoena artisauaren sinadura edo dela, orduan ez litzateke eragozpen handirik egongo *ekien* euskarazko 'zegien' bezala ulertzeko, kontutan hartuta gainera iberierazko idazkerak ez duela kontsonante ahostun eta

ahoskabeen arteko bereiztasunik egiten. Erkaketa hau onartuko bagenu, hau da, Andelo-ko *ekien* euskarazko *zegien* formaren kognatotzat joko bagenu, forma horretan euskarak historikoki ezagutu dituen aldaera dialektalen artean, hots, bizkaierazko *egien* eta gainontzeko *zegien* artean, lehendabizikoa izango litzateke zaharrena eta bigarrena, ostera, forma berritua. Baina *ekien* aditz forma jokatutzat hartuko bagenu, 'egin zuen' edo esan nahi zuena, ergatibozko egitura beharko genuke euskararen ikuspuntutik, testuan agertzen ez dena. Pentsa daiteke ergatibozko egitura euskarak beranduago garatu zuela, Augustoren garaitik x. mendera bitartean, Donemiliagako glosek prozesua garatua erakusten baitute, baina espero zitekeena zen prozesuaren lehen urratsen arrastoak ikustea bederen, *-ga* atzizkiaren presentzia esaterako. Dena dela, gainontzeko hitzak ere ulergaitzak dira euskararen aldetik. *Likine abuloraune* hitzek zeltiberierazko *Likinos* eta *Abulu* pertsona izenekin zerikusi zuzena duten arren, ez dakigu beren arteko erlazio gramatikala zein den. Subjektu bikoitza osatzen dutela uste dutenek *ekien* forman aniztasuna adierazteko modu bat ikusten dute; bata egiletzat eta bestea etxeko nagusitzat hartzen dutenen iritziz, aldiz, *ekien* formaren funtzioa nori pertsona adieraztea izango litzateke. Azken hitza, *bilbiliars*, Bilbili hiriaren izenarekin lotu behar da dudarik gabe, baina nola ulertu behar da atzizki itxura duen *-ars* hori? Azaleko antzekotasunari so eginez euskarazko «bilbiliar»-tzat hartuko bagenu, azaldu gabe geldituko litzateke soinu horien bilakaera historikoa euskaraz. Bestalde, iberierak badu forma berdineko hitz bat, *Arse* hiri izenean ikusten dena, Bilbili-rekin batera hitz konposatu bat osa zezakeena. Ikusten denez, testuaren ulermenak sortzen dituen problemak ugariak dira, baita iberiar testuen corpusaren barruan ere, baina orokorrean ez dut uste testu hau euskara zaharreko testutzat har dezakegunik (eman diren proposamenen azterketarako, ik. De Hoz 2011, 296-313, batez ere 305hh or.).

Vianako La Custodia izeneko tokian agertu diren testuak, aldiz, zeltiberierazkoak dira zalantzarik gabe: bost *tabulae hospitales* edo abegi oneko taulatxo hauetan agertzen diren hitzek, zeharo ulergarriak ez badira ere, zeltiberierazko gramatikan normalak diren atzizkiak eta kasu desinentziak daramazkite. Bestalde iturri klasikoek, batez ere Estrabonek, lurralde horietan bizi ziren Beroiei buruz esaten zutenarekin, hots, zeltiberiarrak eta beroiak leinu berekoak zirela, bat datoz. Mendebalderago agertu diren inskripzioak —Beloradoko abegi oneko taulatxo edo *tessera* eta Reinosako hilarria— zeltiberieraz daude.

Aipatzekoak dira azken urteotan Baskoein lurraldean agertu diren bi iskripzio, hizkuntzaren aldetik oso ilunak badira ere: Olite-Eriberrin agertu den harri zati ondatu batean bakarrik ]*en · s*[ letra andana irakur daiteke, itxuraz iberierazko testu baten zatia izan daitekeena; luzeagoa da Bardeetan agertutako epigrafe bat, baina kasu honetan ere testuaren egoerak ez du uzten ezer identifikatzen, letren banaketarengatik errazago bada

ere hizkuntza indoeuroparren esparruan sailkatzea iberieraren edo euskararenean baino. (Idazkun paleohispaniarrak orain sarean kontsulta daitezke, honako web orrian: http://hesperia.ucm.es/index.php).

## 2.2. Txanponak

Baskoien lurraldeak parte hartu zuen K.a. azken bi mendetan Hispaniako ipar ekialdeko eremu zabalean eman zen iberiar txanponjotze fenomenoan (Untermann *MLH* I; De Hoz 1995). Gustatuko litzaiguke gertakariaren kronologiaz eta txanpon etxe askoren kokapenaz zehaztasun gehiago izatea. Arlo berezi honetako adituek dioskunez, produkzio gehiena zeltiberiar guden bukaeratik, hots, II. mendearen azken aldetik, I. mendearen erdialdera arte eman zen. Baskoien txanpon etxeen artean kokapen ezaguna dutenak lau besterik ez dira, eta laurak lurraldearen ertzetan kokatuak: *kalakoŕikoś* (Calagurris), *sekia* (Segia), *bolśkan* (Osca) eta *iaka* (Iacca). Adituek beste txanpon batzuk ere Baskoien lurraldean edo, gutxienez, Ebro eta Pirinioen arteko lurralde zabalean kokatzen dituzte. Hona hemen txanpon etxe hauen izenak: *arsaos*, *arsakos, baŕśkunes*, *bentia(n), olkaiŕun*, *ontikes*, *sesars*, *tiŕsos* eta *unambaate*.

Orokorrean esan daiteke idazkun gehienak ilunak eta, hizkuntza sailkatzeari dagokionean, zailak direla, salbuespen gutxirekin. Argiena *kalakoŕikoś* da, ezen izenak zeltiberierazko *-koś* atzizkia du, Zeltiberiako txanpon askotan lekukotzen dena; *baśkunes* txanpon etxea, beti Vascones herri izenarekin lotua izan dena, beste aldaera konplexuago batean agertu zaigu, *baŕśkunes*, aditu batzuen iritziz «braskunes» edo antzeko forma baten idazkera gisa ulertu behar dena. Begi bistan dago erkaketa tradizionalak, lehen ere B- eta V-ren arteko ezberdintasuna kontra zuenak, orain oztopo gehiago aurkitzen duela.

Esan daiteke, beraz, txanpon gehienen ezaugarri nabariena sailkatzeko baliogarria izan daitekeen marka garbirik ez izatea dela. Hispaniako txanpon etxe gehienak bi eremu nagusitan banandu daitezke: alde batetik, *-koś* edo *-kom* atzizkia erakusten dutenak, hizkuntzez zeltiberiarrak direnak, eta bestetik *-śken* iberiar atzizkia dutenak. Aipatutako *kalakoŕikoś* salbu, gure lurraldeko gainontzeko txanponek ez dute ez bata ez bestea erakusten. Aipatu egin behar da, hala ere, batzuek Osca-ko txanpon etxeko izena *bolśken* irakurtzen dutela, eta iberiar eremuko *-śken* atzizkiz eratuak diren herri izenekin lotzen. Proposamenak badu bere garrantzia, ezen *bolśkan* formak hain zuzen, Osca izenarekin alderatzen badugu, *-n* atzizki bat erakusten baitu, euskarazko *-n* lokatibo marka bezala azal daitekeena. Atzizki bera *bentia* – *bentian* aldaeretan aurkituko genuke. Bestalde *unambaate*-k, irakurketaren zailtasunak ukatu gabe, iberiar pertsona izen baten itxura du, non *-bas* + *-te* atzizkiak isola daitezkeen. Txanpon idazkunetan agertzen diren leku izenen etimologia beste kontu bat da, orain tratatzen ari garen hizkuntza ezaugarriekin

zer ikusi gutxi duena: *kalakoŕikoś* zeltiberierazko idazkuna izan arren, oinean duen leku izena, Calagorri hain zuzen, Ebro ibarreko iberiar munduan kokatu behar genuke.

Hizkuntzari dagokionean txanponetako izen gehienak ilunak badira, salbuespenak salbu, paleografia eta ikonografia aldetik txanponek multzo berezi bat osatzen dute. Zentzu honetan oso deigarriak dira *sesars* izenean erabili diren *e* eta *s* letrak; era berean, *ontikes* eta *unambaate* txanponetako *n*-a T itxurazko letra berezi baten bidez idatzi da (Beltrán & Velaza 2009).

Orain arte ikusi ditugun lekuko zuzen urriak iberiar idazkeraz daude. Augustoren garaitik aurrera, latin alfabetoak bertako idazkera epikorikoari lekua hartzen dion heinean, agertzen diren testu guztiak latinez idatzita daude: ez da gure artean dokumentatzen, beraz, latin alfabetoan idatziriko euskarazko testurik, Lusitanian lusitanierazko testu alfabetikoak lekukotzen diren bezala. Latinezko inskripzioetan transmititu diren izen propioek —gehien bat pertsona eta jainko izenak— osatzen dute zeharkako material guztia.

## 3. IZEN PROPIOAK

### 3.1. Akitania

#### *3.1.1. Sarrera. Zabalkundea*

Gauza jakina da, Akitania eta Ipar Pirionioetako lurraldeak, bertoko hizkuntzan idatziriko testuak emateko orduan antzuak izan arren —goian esan den bezala—, oso emankorrak direla pertsona eta jainko izenak latindar epigrafeetan lekukotzerakoan. Izen multzo aberats horretatik atera da hizkuntzaren zabalguneari buruz zein hizkuntzaren beraren egituraren gainean dakigun guztia, dakigun hori gehiago hilbanetan hari sendoaz josia baino baldin badago ere.

Izen propioek —onomastikak— ematen duten informazioa, baliogarria izan arren, ez da beti behar bezain garbia, argia edo unibokoa izaten. Izen zahar hauek, bakan batzuk salbu, ez dute berez antzinateko hizkuntzen egoera azaltzeko edota orduko euskararen egitura deskribatzeko indarrik, ez baldin badira lehenago hizkuntzalaritza konparatuaren ikuspuntutik sailkatzen eta argitzen, beste modura esanda, ez badugu lehenago antzinako dokumentazioa euskal lekukotzat jotzen. Argitze hau hizkuntzalaritza historikoak konparaketaren bitartez eman diezaiguke, metodo konparatzaileak eskatzen dituen baldintza zorrotzak garai ezberdineko baina ustez hizkuntza bereko datuei aplikatuz. Hau da, akitanierazko *seni-* (*Senico* pertsona izenean agertzen zaiguna) euskarazko *sehi*-ren aitzin formatzat hartzen badugu, eta ez zelta hizkuntzetan 'zahar' esan nahi duenaren *seno*-ren kidetzat (Mitxelenak 1954an bere proposamena egin baino lehen gehienek

uste zuten bezala), forma bi horiek zehazki lotzen dituzten euskal bilakaera ezagunak identifikatzeko gai garelako da: lehendabizi bokal arteko sudurkariaren desagertzea sudurtasuna alboko bokalei itsatsiz eta aspirazioa aztarna bezala utsiz (**seni* > *sẽ*(*h*)*ĩ*), gero euskalkien arabera sudurtasuna bokalen ezaugarri izatetik segmento autonomo izatera pasatuz (*sẽ*(*h*)*ĩ* > *sein*).

Ahaztu egin behar ez dugun bigarren kontua, zera da, ez garela ari hizkuntza batean idatzitako testu normalak azaltzen, baizik eta berez zentzurik ez duten izen propioak aztertzen. Izen propioek, izen arruntek ez bezala, ez dute zentzurik, bakarrik erreferentzia. Zentzuak ematen duen kontrolik gabe, hitzen arteko konparazioa azaleko itxurara mugatzen denean, sortzen diren berdinketak kontaezinekoak dira. Horrexegatik dira izen propioak hain labankor hizkuntza konparaketa lanetan, azaleko berdinketarako duten erreztasuna ez baldin bazaie nolabait mugatzen kanpo eskakizun batzuekin: esaterako, zatien edo elementuen errepikapena, morfema konbinaketen koherentzia, adierazten duten erreferentziarekiko adostasuna (pertsona izenen banaketa sexuaren arabera, esaterako), leku eta denbora koordenadetako koherentzia, etab.

Hemendik ateratzen den ondorioa garbia da: antzinateko lekukotasuna euskararen etorkia eta historiaurrea argitzeko oso garrantzitsua izanik ere, geroko euskararen menpe dagoela erabat, honek ematen baititu soil soilik antzinako lekuko bakanak azaltzeko eredua eta bidea; antzinako formek, fosilak izango balira bezala, berez ez dute zentzurik, ez bazaie historia luzeago baten barruan bere tokia bilatzen; gerta daiteke antzinakoa euskalkien gainean berreraikitako forma baten berdina izatea, baina gerta daiteke baita ere bakoitzak garai ezberdin bateko egoera erakustea: hitz elkartuetan lehenengo zatiak jasatzen dituen aldaketei dagokienez euskarak akitanierak baino egoera berriagoa erakusten du, *giza-*, *sema-*, *sen-* adibidieetan ikusi daitekeenez akitanierazko *cison-*, *sembe-* eta *seni*-ren aldean; bestalde akitanierazko hitz gehienek, bisilabadun izanik, aitzin euskararen erro monosilabikoaren egoera garatu dute (ik. liburu honen 2. kapitulua). Beraz azalpenak orokorra beharko luke izan, eta ahal den neurrian bi muturretako datuak bide batez azaldu: antzinako formek euskararen historiaz dakigunarekin ados etorri behar dute, historia honen mugarri sendoak bihurtzen diren eran.

Izen horien azterketatik atera daitezkeen ondorio linguistikoak azaltzen hasi baino lehen pare bat hitz esan behar da lekukoak bideratzen dituen latindar epigrafiari buruz. Esan bezala, izen propioak latindar epigrafe ohikoetan lekukotzen dira, hau da, hilarri edo jainkoei eskainitako aldaretan. Inperioko leku gehienetan bezala, testuak nahiko formularioak dira, lehenengo kasuan hildakoaren eta batzuetan hilarria jartzea agindu duenaren izenak adierazten direlarik, eta bigarrenean jainko edo jainkosaren izenarekin batera aldarea eskaini duenarena. Pertsonen deitura formula, ezberdina hiritarren eta eskubide politikorik gabeko 'peregrino'-en kasutan, konsagrazio eta eskaintza formulak eta gainerako informazioa

Inperioko edozein lekutan ediren daitezkeen antzekoak dira. Bakarrik izen propioak dira bereziak, latinezko testu normal batean itsatsirik bertoko hizkuntzen isla zurbil gisa kontsidera daitezkeenak. Mota honetako epigrafe sinpleek ez dute datarik adierazten. Eta normalean bere jatorrizko tokitik kanpo beste funtzioetarako berrerabiliak izan direlako (eliza, hilerri edo zenbait baserritako hormetan txertatuak, ur bedeinkatuaren ontzi edo aldareoin gisa, etab.), ez da ezagutzen, kasu bereziriren bat salbu, dataziorako lagungarria izan daitekeen testuinguru arkeologikorik. Mendebaleko latindar inskripzioen produkzioa kontuan harturik, epigrafe gehienak I. mendetik III.era bitartean datatzen dira. Kasu berezi batzuetan, indusketa baten bitartez eskuratu diren inskripzioetan, esaterako, Comminges-eko zenbait santutegitan gertatu den bezala, data zehatzagoren bat proposa daiteke.

Harrizko inskripzioak, —hilarriak, aldareak eta ohorezko epigrafeak— XIX. mendean batu, aztertu eta argitaratu ziren Latindar Inskripzioen Korpuseko XIII. tomoan (*CIL* XIII). Harrezkeroztik aurkitutakoak tokian tokiko aldizkari edo departamenduetako katalogo arkeologikoetan argitaratu dira. Ontzien gainean idatzitako grafitoak ez dira inoiz modu egoki batean argitaratuak izan. Azken urteotan Akitania handiko latindar epigrafia guztia berrargitaratzeko egitasmoa abian jarri da, baina guri gehien interesatzen zaizkigun epigrafeek, hots, Hegoaldeko Akitaniakoek, lehen bezala diraute.

Epigrafe horien zabalguneari erreparatzen badiogu konturatuko gara epigrafeak ez daudela Akitaniako eremu guztietan modu orekatu batean zabalduta.

Orokorrean Akitania bi zatitan bereiz daiteke: a) ekialdeko zatian, Garona ibaiaren isurialdeko lurretan, epigrafeak oso ugariak izateaz gain *civitas* edo hiriaren bazter guztietan kokatzen dira, hiriburura mugatuak izan gabe; lurralde honetan Convenatarren eta Ausko-tarren hiriak dira epigrafe gehien eman dituztenak: Convenatarrek 500 inguru, horietarik hiriburukoak 139 direlarik; Auskotarrek 85 eta Consoranno-tarrek 20; b) mendebaldekoan, Aturri errobiko lurrak, Landak eta Euskal Herria batzen duen zati honetan, ordea, epigrafeak hiriburuetan agertzen dira ia bakarrik, hala nola Akizen, Aire-sur-Adourren, Mont-de-Marsan-en, etab. Hiri hauetako epigrafeak guztira 53 besterik ez dira. Ematen du Convenatarren marmol harrobien ustiapenak zerbait lagunduko zuela marmolaren erabilera errazten, baina datu horrek soilik ez du aipatu dugun banaketa azaltzen. Harrobiak Pirinioetako leku gehienetan zeuden, baita mendebaldean ere. Zerikusi gehiago du sarreran aipatu dugun Akitaniaren banaketa kulturalarekin beste edozerekin baino, kontsideratzen badugu epigrafeak idazteko ohitura mediterranear herrien ezaugarri kulturala zela, erromatarrek azken gailurreraino eraman zutena. Ekialdeko Akitanian antzematen den epigrafia aberatsa, lurralde bereko ardo anforen ugaritasuna bezala, erromatar kulturarekin izan duen ukipen goiztiarraren ondorioa da.

Akitaniako bi aldetan ematen den banaketa ez da soilik epigrafeen zenbatekoan gauzatzen; askoz ere gehiago interesatzen zaigu onomastikaren beraren portaera. Eta

## Akitaniako latindar inskripzioak




Civitates-en mugak. Hirugarren mailakoak
Behe inperioaren garaiko probintzia akitaniarren mugak. Bigarren mailakoak
Goi inperioaren garaiko akitaniar probintzia erromatarren mugak. Lehen mailakoak
Latindar inskripzioen aurkikuntza guneak (aurkikuntza kopuruaren araberako tamaina)

Muga
Ibaia

gauza deigarria da ikustea bertako izen indigenak ekialdeko zatian lekukotzen direla gehienbat, mendebaldeko epigrafeetan ia bakarrik latindarrak agertzen diren bitartean. Hala, datu batzuk ematearren, Lugdunum-eko hirian 105 izen latindarren ondoan 55 indigena konta daitezke; mendebalderagoko Neste haranean bi multzoen arteko proportzioa berdindu egiten da: 20 izen latindar eta 18 bertoko. Bagnères de Luchon inguruko haranetan, batez ere Oueil eta Larboust-ekoetan, alderantziz gertatzen da: gehiago dira izen indigenak (26) latindarrak baino (22). Mendebaldeko hiriburuetan, aldiz, esan dudan bezala, guztiak dira greko-latindarrak; baina badago oraindik nabarmendu nahi dudan beste kontu bat: latindarrak izateaz gain, erromatar hiritarren izenak dira, eta ez eskubide politikorik gabeko jende xumearenak. Akizen lekukotzen diren 12 pertsonetarik 11 hiritar erromatarrak —*cives romani*— dira, Antonii, Valerii eta Cornelii familiatakoak, gelditzen den bakarra Chrysantus izeneko esklabua delarik. Berdintsu gertatzen da Aire-sur-Adourreko lekukoekin: bi pertsonen kasuak salbu, beste guztiak hiritarrak dira, Attii et Claudii familiatakoak. Banaketa honen aurrean, aditu batzuek, datuak bere gordintasunean hartuz, uste izan dute mendebaldeko zatia, Ipar Euskal Herria barne, latin eremu bihurtu zela erabat Inperioko lehen mendeetan, VI-VII. mendeetako Baskoien inbasioei esker berriro euskaldundu zen arte. Hala uste zuen Bähr-ek (1948). Arazoa, bere paradoxa kutsu eta guzti, errazago azaltzen da kontsideratzen badugu datuen banaketaren arrazoia ez dela hizkuntzen egoeran bilatu behar, jendeak idazteko zuen ohituran baizik: inskripzioak grabatzeko ohitura hedatuagoa zen lurraldean erromatar hiritarrak ez zirenek ere —hau da, peregrinoek eta haatik bertoko izenak eramateko aukera gehiago zutenek— ohitura bereganatu zuten; mendebaldeko zatian, aldiz, hiriburuetako erromatar hiritarrek soilik idatzi zuten neurrian, ageri zaigun onomastikak gizartearen ikuspegi partziala ematen digu.

Akitaniako onomastika indigenaren lehen azterketak hasi zirenetik dakigu izen propio gehienak bere jatorriari dagokionean bi multzotan bana daitezkeela: batzuk galiarrak dira, Galiako beste tokietan lekukotzen diren antzekoak, eta beste batzuk, ordea, bertokoak, euskararen ikuspuntutik azal daitezkeenak. Banaketa teorian sinplea da, baina askotan sailkapena egitea ez da batere erraza. Pare bat arrazoi daude hortarako.

a. Izen batzuek etimologia garbia erakusten duten bitartean, beste batzuk ilunak dira ia ezer gutxirekin erka daitezkeenak. Lehenengoen artean alde bateko eta besteko adibide garbiak ditugu: *Toutannorigis* (gen) edo *Cintugnati* (gen) izenek galiar ezaugarri guztiak dituzte bere gain, *Sembecconi* (dat) edo *Gisonten* bezalakoak akitanierazko multzoaren ordezkari bikainak diren moduan. Baina *Silex* emakume izena edo *Xuban* jainko izena, bi adibide besterik ez aipatzearren, azalpen garbirik gabe gelditzen dira. Etimologia ezaguna ez duten izen askoren aurrean bigarren

mailako irizpideak erabil daitezke sailkapenaren lagungarri, esaterako, morfemen egitura edota fonema / grafia berezien presentzia. Hala *Ulohoxo* (dat) gizon izen edo *Leherenni* (dat) jainko izenen kasuan, bokalen arteko aspirazio horrek eta desinentzia aurretik idazten diren X eta NN letrek eskubide gehiago ematen dute akitanierazko multzoan sailkatzeko beste inon baino.

b. Izen batzuk anbiguoak dira jatorriaren aldetik, hau da, bi hizkuntzen aldetik azal daitezke. *Senius* bezalako izen bati, adibidez, bai akitanieraz bai galieraz aurki diezaiokegu azalpen zuzena, kasu batean euskarazko *sehi*, *sein* hitzekin lotuz, eta bestean galierazko *seno-* 'zahar' elementuarekin erkatuz. Ikerleen gustu edo ezagueren arabera, denetik egon da. Mitxelenari (1954a) zor diogu sailkapen arazo honetan irizpide formal garbi bat ekarri izana, galiar hitza *-o* enborrekoa den bitartean euskal hitza *-i* enborrekoa dela, alegia; hori kontuan harturik, *Seni-cco*, *Seni-tennis* (gen) eta antzeko izenak akitanierazko multzoan zerrendatu behar dira dudarik gabe. Baina zer egin *Senius* bezalako izen batekin? Akitanoa izan daiteke, jatorrizko *seni-* formari latinezko *-us* desinentzia gehitu ondoren sortu dena, eta badaude beste adibide batzuk bide hau sustatzen dutenak, baina bestalde oso normalak ziren indoeuropar hizkuntza guztietan, galiera eta latina barne, *-io-* atzizkiaren bitartez moldatutako hitz eratorri edo deribatuak. Zenbait kasutan ez dira izango irizpide linguistiko hertsiak, testuingurua baizik, auzia alde batera edo bestera erabakiko dutenak. Esaterako, Saint-Gaudens inguruko inskripzio batean (*CIL* XIII, 174) agertzen den testuan [*Aherbelste deo Senius et Hanna Procul*(*i f* ? ) = Aherbelste jainkoari, Seni eta Hanna Prokulo(ren semeek eskaini diote)?], jainkoaren izenak zein bigarren gizonezkoaren izenak sailkatu egiten dute gure izena akitanieraren esparruan. Bramevaquen aurkitutako inskripzioan [*I. O.M. Senius Conditus Congi f.v.s.*], ordea, giroa arras bestelakoa da: kasu honetan Jupiterri eskaintza egin dionak, II. mendetik geroagoko erromatar hiritar bati zegokion deitura formula erabili du bere nortasuna adierazteko, hau da, *nomen* (abizena) + *cognomen* (goitizena) + aitaren izena. Ikusirik goitizena zein, batez ere, aitaren izena galiarrak direla, pentsa daiteke *Senius* kasu honetan galierazko *seno*-ren gainean moldatutako erromatar *nomen*-a dela.

Gorago esan den bezala, Akitaniako euskal leinuko onomastika, euskara historikoak eta batez ere honen gainean berreiraikitako sistemak eman dion laguntzaz argitu izan da, ak. *Senius* : eusk. *sehi*, *sein* bikoteak erakusten duen bezala. Horregatik protoeuskararen berreiraiketan eman diren aldaketen edo aurrerapausuen harira joango da akitaniar onomastikaren azalpena ere aldatzen. Garbi dago erkaketa batzuk, hala nola ak. *Andere* : eusk. *andere* edo ak. *Nescato* : eusk. *neskato*, begibistakoak izateaz gain, euskararen garapen

historikoan eman diren prozedurekin bat datozela. Zentzu berean ak. *Sembe-cco-* eusk. *seme*-rekin lotzen bada, erabateko parekotasunik egon gabe, bigarrena lehenengo forma batetik atera daitekeelako da, *-mb-* > *-m-* aldaketa fonetiko erregularra onartuz. Baina, ondoko izen hauetan, *Neuri* (gen), *Neuren*[, eta *Neuresini* (dat), isolatzen den *Neure-* oina nekez lotu daiteke eusk. *neure* izenordainarekin, azalean berdinak izan arren, euskal hizkuntzalaritzaren arabera zenbait euskalkietako *neure* forma *nihaure* forma zaharrago baten aldaera delako. Antzekoa gertatzen da ak. *Arixo* eta *Arixoni* jainko izenak eusk. (*h*)*aritz*-en ordainak egiten direnean, azken forma hau ez delako euskal hitzak ezagutzen duen ez forma bakarra eta ez zaharrena, bizk. *aretx* eta *areitx* aldaerek erakusten dutenez; euskalkietako aldaerak azalduko lituzkeen forma **hareitz* izango litzatekeenez gero, hautabide baten aurrean aurkitzen gara, edo erkaketa ez onartzea edo, zuhaitz izenen gainean eratuta dauden beste jainko izen batzuk haintzakotzat hartuz, hau ere onartzea diptongoaren sinplifikazioa akitanieraz emana zela onartuz (ik. orain arazo honi buruz, aldare baten irakurketa berria dela medio, Gorrotxategi 2015).

### *3.1.2. Izenak eta izen oinak*

Arestian tratatu diren arazoak ahaztu gabe, ondoren zerrendatuko ditut akitaniar onomastikan ageri diren izen oinak. (Erabiltzen diren laburdurak: E, emakumezko izena; G, gizonezkoena; j, jainko izena).

ONOMASTIKA AKITANIAR-BASKOIAREN KOKAPENA



*Aho-*: Aho-issi (gen).

*Andere*: Andere, Andere-ni (dat), Andere-seni (dat), Andere-xo, Andre-cconi (dat). Ik. eusk. *andere*. Aldaera: Annereni (dat), *-nd-* > *-nn-* bihurtu ondoren.

*Andoss*: Andosso (dat), Andossi (gen), Andossus, Andos-ten, Andos-tenni (dat), Andos-tenno (dat), Andos-tonis (gen). Aldaera grafikoa: Andoxus, Andox-ponni (dat). Latinezko desinentziarik gabeko oin hutsa: Andos, Andus, Handos (behin bakarrik). Guztiak gizonezkoen izenak. Jainkoen epiteto gisa: (Herculi Ilunno) Andose, Andosso (Bascei-; Herculi Toli-). Eta *-nd-* > *-nn-* aldaketa duena, A]nnoss[us.

*Atta-*: Atta-coni (dat), Atta-conis (gen), Atta-io-rig (gen). Ik. eusk *aita*.

*Aher-*: Aher-belste (j). Ik. eusk. *akher*.

*Arix-*: Arixo (j), Arixoni (j). Ik. eusk. *haritz*.

*Arta-/Arte-*: Artahe (j), Artehe (j), Arte (j). Ik. eusk. *arte*.

*Asto-*: Asto-ilunno (j). Ik. Ars-ilunno (j), eusk. *asto*.

*Bai-*: Bai-ase (j), Bai-gorixo (j), Bai-osi (j), Bai(-coriso, j; -corrixo, j). Aldaera: Buai-gorixe (j). Ik. eusk. *ibai* (?)

*Bais-er-*: Baeser-te (j), Baesel-lae (dat) eta agian Baiso-thar (gen). Ik. ib. *baiser*.

*Belex-*: Belex, Belex-conis (gen), Belex-eia (E), Belex-ennis (gen). Hitz konposatuen bigarren elementu gisa: Bon-belex, Har-belex, Har-belex(s)is (gen.), [H]arbelsis (gen), Har-belesteg[, Aher-belste (j). Ik. eusk. *beltz*, *-bel*.

*Berhax-*: Berhaxsis (gen. 84). Ik. eusk. *beratz*.

*-berri-*: Beti hitz elkartuaren bigarren elementu gisa, ondorengo jainko izenetan: ]mberri, Ilur-berri-xo, Ilur-berri-xon[ eta ziur asko Eberri, Lum-ber[. Ik. eusk. *berri*.

*Bihox-*: Bihoxus, Bihos-cinnis (gen), Bihossi, Bioxxi. Erabat segurua ez den arren, badago Bihotus. Ik. eusk. *bihotz*.

*-Bon-*: Hitz konposatuetako lehen elementu gisa: Bon-belex, Bon-silexsi (dat. E). Hitz eratorrietan: Bon-coxsi (gen), Bon-tar, Bon-ten, Bon-tos[.-xso-atzizkiarekin: Bonx(s)us eta aldaera grafikoa den Monsus, Bonxi (gen.), Bonxorius, Bonxsoni (dat.). Ik. eusk. *on* (?).

*Bors-*: Borsei (gen), Borso (dat), Borsus. Ik. eusk. *bortz*, *bost*.

*Cison-*, *Gison-*: Cison, Cisson-bonnis (gen), Cison-ten, Gison-doni (dat). Guztiak gizonezkoen izenak. Ik. eusk. *gizon*.

*-corri-*, *gorri-*: Hitz konposatuetako bigarren elementua, ondorengo jainko izenetan: Bai-gorixo, Bai-coriso, Bai-corrixo, Lur-gorr[, Heraus-corri-tsehe. Ik. eusk. *gorri*.

*Edun-*: Edunnis (gen), Edunn[ (E), Edun-xe (E)

*Enne-*: Enne-box. Ik. eusk. *Enneco*, Erdi Aroko pertsona izena.

*Ere-*: Ere-seni (dat. E), Erhe-xoni (dat. E). Emakumezkoen izenak osatzen dituen oina, agian *andere* hitzean ageri dena.

*Esten-*: Esten-conis (gen). Ik. eusk. *ezten* (?).

*Gere-*: Gerexo, Gerexso.

*Hahan-*: Hahanni (dat. E), Hahan-ten (E), Hahan-tenn, emakumezkoen izenak.

*Hals-*: Hals-conis (gen), Hals-cotarris (gen), Ik. Tals-conis.

*Hanna-*: Hanna-bi (gen), Hanna, Hannas, Hanna-c(o), Hanna-xus. -n- bakar batekin: Hana-conis (gen), Hana-rro (dat). Ik. eusk. *anaia* (?)

*Har-*: Har-belex, Harbelex(s)is (gen), Har-belesteg[ (gen), [H]ar-belsis (gen).

*Haron-*: Haron-tarris (gen). Ik. Narun-.

*Hars-*: Harsi (gen), Hars-ori, Hars-pi (gen). Ik. eusk. *hartz*.

*Hauten-*: Hauten-se (E), Hauten-soni (E), Haute-ten.

*Halo-*: Halo-isso (j), [H]alo-assi (j).

*Heraus-*, *Haraus-*, *Harous-*: Antza denez, oin bakar baten aldaerak. Heraus-corritsehe (j), Harausoni, Harousoni (j). Ik. eusk. *herauts* (?).

*Ili-*: Ilixo, Ilixoni jainko izena.

*Ilun-*: Ilunn-osi (gen); jainko izenak: Iluni, Ilunni. Epiteto gisa: Herculi Ilunno, Astoilunno, Arsilunno. Ik. eusk. *il(h)un*.

*Ilur-*: Iluroni (j), Ilur-berrixo (j), Ilur-berrixon[ (j). Aldaera: Lur-: Lurgorr[ (j). Ik. eusk. *lur* (?).

*Laur-*: Laur-co, Laur-eia (E), Laur-inae (dat. E). Ik. eusk. *laur*.

*Lohi-*: Lohi-tton (dat); Lohix-: Lohixsi (gen), Lohisi (gen). Ik. eusk. *lohi*

*Nesca-*: Nescato (E). Ik. eusk. *neska*, *neskato*.

*Neure-*: Neuren[, Neuresini (dat. E), Neuri (gen).

*Leher-en-*: Jainko izena, ondorengo formetan lekukotua: Leherenni, Leherenno, Lereno, Lerenno. Ik. eusk. *leher* (aditza), *leher* (zuhaitza).

*Ombe-*: Ombe-cco, Ombe-xonis (gen), Ombex[. Ik. Umme- eta eusk. *ume*

*Orgo-*: Orgo-anno (dat), Orco-tarris (gen), eta agian Orcu-ari (gen), Orgu-arrae (dat. E), Orgot-. Azken hau galierazko *Orgeto-* izenarekin nahastua.

*Oxson-*: Oxson, Osson. Ik. eusk. *otso*.

*Sembe-*: Sembe-cconi (dat), Sembe-donnis (gen), Sembe-tar, Sembe-tennis (gen), Sembe-x(s)onis, Sembi (gen), Sembus. Guztiak gizonezkoen izenak. Ik. eusk. *seme*.

*Seni-*: Seni-cco, Seni-ponnis (gen), Seni-tennis (gen), Seni-xsonis (gen), Seni-us. Ik. eusk. *sehi*, *sein*, *segi* (< **seni-*).

*Silex-*: Silex (E), Silex-conis (gen), Bon-silexsi (dat, E). Ik. eusk. *sirats* (?).

*Siri-*: Siri-cconis (gen), Siri-cconi (gen). Ik. eusk. *ziri* (?).

*Soson-*: Sosonnis (gen). Ik. eusk. *zozo* (?).

*Tals-*: Tals-conis (gen), Tals-eiae (dat. M.). Cf. Hals-. Ik. ib. *talsku-bilos*.

*Uloho-*: Uloho-ssii (gen), Uloho-xis (gen), Uloho-xo (dat). Ulu- aldaera: Ulu-cirris (gen).

*Uri-*: Uria (E), Uri-assi (gen), Uri-axe (E).

Goiko zerrenda honetan euskararen aldetik azalpen seguruena pertsonak eta familia arteko erlazioak adierazten dituzten izenek jasotzen dute, hala nola, *Cison*, *Andere*, *Sembe-*, *Seni-* eta *Neskato*.

Akitania: harreman pertsonalak eta senidetasuna adierazteko izenak




- Andere
- Sembe-
- Seni-
- Cis(s)on

1a. Saint-Bertrand-de-Comminges
1b. Saint-Bertrand-de-Comminges
1c. Saint-Bertrand-de-Comminges
2. Boucou
3. Bramevaque
4. Montsérie
5. Arnesp, Valentine
6. Saint-Gaudens
7. Eup
8. Saint-Béat
9. Gaud, Cierp-Gaud
10. Caubous
11. Saint-Aventin
12. Barcugnas, Bagnères-de-Luchon
13. Bordères-Louron
14. Bagnères-de-Bigorre
15. Cardeilhac
16. Saint-Elix
17. Martres-Tolosane
18. Boussens
19. Saint-Girons
20. Escunhau, Val d'Aran

Multzo berean sar daitezke ziur asko *Andoss-*, *Hanna-* eta *Hahan-*. Lehenengoa gizonezkoen izen ugaritan erabilia izateaz gain jainkoen epiteto gisa ere erabili zen, non 'dominus'-en esan nahia egokia izango litzatekeen. *Hanna-* oina eusk. *anaia*-ren ordaintzat hartzeko aspirazioa izango litzateke arazo larriena, sudurkariaren aldetik ez baitago batere. *Hahan-* oinak ez du euskaraz ordainik, baina kontsideratzen badugu alde batetik beti emakumezko izenak osatzen dituela eta bestetik formari dagokionean **han-* erroaren errepikapena izan daitekeela, hots **ha(n)-han-*, lehen ikusi dugun *Hanna-* oinean ere ageri dena, pentsa daiteke familia arteko erlazioren bat adierazteko erabili zela.

Gainontzeko erkaketek ez dute horrenbesterainoko segurantza erakusten. Dena dela, batzuk animalien izenak direla ematen dute, hala nola, *Aher*, *Asto*, *Hars*, *Heraus* eta *Oxson*, arazo txiki batzuk egon arren. Antza denez, *Aher*-ek *-kh-* trabaria galdu du, ez dakigula zergatik; *Asto*, *hartz* hitzetik eratorria bada, ez du jadanik aspiraziorik, *Ars*-oinak bezala; ez dakigu zergatik *Oxson -n* batez bukatzen den. Zuhaitzen izenak izan daitezkeen artean, *Arix-*, *Arte* / *Arta*, eta agian *Leher-* aipa daitezke, hirurek detailezko arazoak dituztela ahaztu gabe. Semantikaren aldetik, behintzat, latinezko *Fago deo* eta *Sexarbori deo* eskaintzek sostengua ematen dute. Koloreen edo argiaren arloan kokatzen dira beste batzuk: *Belex*, konposatuetan *-bels*, alde batetik, eta *ilun*, bestetik, dira konfiantza gehien sortarazten dutenak; *gorri*-k esan nahi bat baino gehiago izan zezakeen. Badirudi *laur-* eta *bors-* izenoinak zenbakiak zirela. *Bihoxus* izenean antzeman daitekeen *bihox-* oina, trabari ahoskabe baten aurrean *bihos-* ageri dena, eusk. *bihotz*-en ordain garbia da, analisirako aukera gehiago egongo balitz ere, esaterako, *biho-* + *-tz* atzizkia / + *-t* (*Bihotus*), edo *bi* + *hox-* /*-t*.

Zerrendatutako izen oinen eiteari dagokionean, gehienak bisilaboak dira, hala, *Gison*, *Seni*, *Sembe* e.a., silaba bakarreko batzuk ere lekukotzen direlarik, beti kontsonante ozen batez bukatuta: *Har-*, *Hars-*, *Bors-*, *Laur-*. Pentsa daiteke bisilabo batzuk izatez silaba bakarreko erro batetik osatutako oinak direla: lehen ikusi dugun bezala, *Hanna*- eta *Hahan*-en arteko erlazioa **han* erro bat onartuz azal daiteke; uste badugu *seni-* eta *sembe-* ez daudela elkarrengandik urruti eta, ondorioz, erro berbera dutela jatorritzat, pentsa dezakegu erro hori **sen* izan zitekeela, zeini kasu batean *-i* eta bestean *-be* atzizkiak gehitu zaizkion. Baina egia da akitanierazko korpusean ez dagoela horrelako berreraiketa proba dezakeen morfema txandaketa garbirik. Berreraiketa ondo asmatua balitz ere, akitanierazko hiztunentzat *sembe* hitza zati txikiagotan analizatu ezin zitekeen hitz bisilaboa zen; honen proba, hain zuzen, *m* letrak ematen digu, ezen beste zenbait adibideetan ikusten den bezala, hitz elkartuetan lehen hitzaren azken sudurkaria (*-n*) hurrengo hitzaren hasierako ezpainkariaren aurrean suertatzen zenean, *Cissonbonnis*-en kasuan esaterako, ez da asimilaziorik ematen eta *-nb-* ez da *-mb-* bihurtzen. Honek esan nahi du *Sembe*-ren kasuan, *Ombe*-renean bezala, ez zegoela morfema etenik sudurkaria eta ezpainkariaren artean. Dena dela, *Hanna*-ren eratorria den *Hannabi* (gen) izena *-be* atzizki libre baten alde agertuko litzateke.

Zenbait kasutan antzematen da, formalki bederen, silaba bakarreko oina atzizki afrikatu baten bitartez luzatu dela; ez dakigu *Hars-* oina *Har-* erro eta oinaren luzapena den edo azken honekin zerikusirik ez duen zerbait. *Bonxsus* eta antzeko izenetan agertzen zaigun afrikatua zaila da analizatzen, ezen ez gaude seguru atzizki libre baten aurrean aurkitzen garen (**-xso-*) edo zentzu semantikorik gabeko luzapen huts baten aurrean: *bon-* : *bonx*, bigarren deklinabidetik zehar egokitu dena. Halako luzapenak

egon bazeudela euskarazko zenbait txandaketak erakusten digu, *-bel* / *beltz* bikotean ikusten denez. Antzinateko lekukoen artean, ak. *Belex*, *-bels* formek alde batetik eta Andrearriagako harrian agertzen den *Bel-tesonis* (gen) formak (eta agian *Belheio-rigis*, gen., formak), bestetik, txandaketa formal berbera erakutsiko lukete.

Akitania: beste izen batzuk



- Andossus, Andoxus
- Bel-, Belex
- Bels

1. Saint-Bertrand-de-Comminges
2. Labarthe-Rivière
3. Boucou
4. Saint-Pé-d'Ardet
5. Gaud, Cierp-Gaud
6. Saint-Béat
7. Melles
8. Antignac
9. Benque-Dessous-et-Dessus
10. Caubous
11. Cazarilh-Barousse
12. Montsérié
13. Tarbes
14. Sos
15. Auch
16. Cardeilhac
17. Liéoux
18. Landorthe
19. Saint-Gaudens
20. Gourdan-Polignan

Goiko zerrendan euskal ordain bikainenak dituzten izenen artean *Andere* da trisilabo bakarra. Batzuek uste izan dute mailegua dela, eta aurki daitezke lekuko zaharren artean edo gaur eguneko zelta hizkuntzetan 'txahal, biga' esangura duten antzeko hitzak. Baina, akitanierazko korpusean bertan begiratzen badugu, deigarria da ikustea badagoela

*Ere*, *Erhe* izen oin bat emakumezkoen izenak sortzeko soilik erabili dena. Askori zilegi irudituko zaio suposatzea *Erhe* izen oina nolabait *Andere* izenaren osagai dela, elkarren arteko lotura azaltzea erraza ez den arren. Behar bada, gizonezkoen izenetan soilik lekukotzen den *Andossus* ekarri behar da eztabaidara. Gogora dezagun pertsona eta familia arteko harremanak adierazten dituzten izenen artean hau dela, gizonezkoentzako, euskal ordainik ez duen bakarra. Hitz konposatuek alde batetik eta latinezko desinentziarik gabeko kasu bakan batzuek bestetik erakusten digute oina *andos*-, *andox*- zela. Bestalde ez zituen soilik gizonezkoen izenak osatu, jainkoen izenen ondoan ere erabili izan zen zenbait kasutan, epiteto baten antzera: adibide argiena Narbonako aldare batean irakurtzen den *Herculi Ilunno Andose* (dat.) da. *Andos* oina modu bat baino gehiagotan analiza daiteke: *-oss-* /*-ox-* atzizki afrikatu bat onartu daiteke, eite berdina duten beste atzizki afrikatuen antzera, *-ass-*, *-iss-*, edo *bel-ex*-en aurkitzen dugun *-ex-* (ik. atzizkien zerrenda); edo *an+doss* elementuez osatutako hitz konposatutzat har daiteke. Hala balitz, bigarren osagaiak euskal ordain onargarri bat izango luke: normalean animali arrak adierazten dituzten zenbait hitzetan, esaterako *ordots* edo *bildots*-en antzeman daitekeen *-dots* elementua, hain zuzen. Osagai berbera aurki daiteke, ziur asko, Erdi Aroko «La reja de San Millan» izeneko eskuizkribuan lekukotzen den *andosco* ‘ahari gaztea’ hitzean, pentsatzen badugu *ahuntz*-en (< **an-untz*) dagoen **an-* erroaren gainean osatu dela *-dots* elementua gehituz. Analisi honek ederki azalduko luke izena soilik gizonezkoentzat erabili izana; eta bestalde, *Andere*-rekin duen antza kontuan hartuz, pentsa daiteke zentzuaren aldetik ‘jauna’ edo esan nahiko zukeela, jainkoen epitetotzat erabili izana ere nahiko logikoa ageriz.

### *3.1.3. Izen eratorpena*

Izenen egiturari dagokionez, gehienak izen eratorriak dira, oin bati atzizki bat edo gehiago erantsiz osatu direnak. Konposatuak nabari gutxiago dira, eta lekukotzen diren gehienak jainko izenetan ageri dira. Galiar eta iberiar onomastikan konposizioa ugariagoa da; azken honek badu bere eragina baskoien lurraldean lekukotzen den euskal onomastika zaharrean.

Akitaniar onomastikan bereiz daitezkeen atzizkien zerrenda:

*-bo-*: Iarbonis (gen), Sonbrabonis (gen). Bestalde, Hanna-bi (gen), Hars-pi (gen) izenetan atzizki hau edo *–be* atzizkia 2. deklinabidetik egokitua izan da. Ik. beherago *-xs-*. Atzizki konplexuago batean: Enne-box.

*-cin*(*n*): Bihos-cinnis (gen), ]scinni (gen). Itxuraz *-ginn-* atzizkiaren aldaera: Torste-ginno (dat).

*-cir*(*r*)-: Ulu-cirris (gen).

*-cco*(*n*)-, *-co*(*n*)-: Andrecconi (dat. E), Attacconis (gen), Attacconi (dat), Belex-conis (gen), Hanaconis (gen), Laurco, Matico, Ombe-cco, Sembecconi (dat), Silex-conis (gen. G), Siricconis (gen), Tals-conis (gen). Boncosi (gen) eta Halscotarris (gen) izenetan atzizki konplexuak daude *-co-* + *-xs-* / *-tar*(*r*).

*-eia-*: Belex-eia (E), Lexeia (E), Lexeiae (dat. E), Talseiae (dat. E), Laur-eia (E). Emakumezkoen izenak osatzen ditu.

*-nn-*, *-enn-*, *-anno-*: Belex-ennis (gen), Leherenn (j), Borienno (j), Orgo-anno (dat), Od-anni (gen), Toutanno-(rigis) (gen).

*-osso-*: Andossus, Andossi (gen), e.a. (ik. supra Andoss-). Gainera Ilunn-osi (gen), Bai-osi (j), Bort-ossi (gen), Condann-ossi (gen).

*-ass*: Bai-ase (j), [H]alo-assi (j), Uri-assi (gen).

*-iss-*: Aho-issi (gen), Beisirisse (j), Halo-isso (j), Tarlebissi (gen).

*-ori-*: Hars-ori (nom. eta gen.), Bonx-ori-us.

*-rro-*: Hana-rro (dat), Orguarrae (dat. E).

*-se*(*n*)-: Atzizki fem.: Andere-seni (dat. E), Ere-seni (dat. E), Neure-seni (dat. E), Hauten-se (E). Sudurkari atzean, *-xe* aldaera: Edun-xe (E).

*-tar*(*r*)-: Bihotarris (gen), Bon-tar, Halsco-tarris (gen), Haron-tarris (gen), Hotarris (gen), Hotarri (dat), Orco-tarris (gen), Sembe-tar. *-thar*(*r*)- aldaera: Baisothar[ (gen) eta Hontharris (gen).

*-ten(n)-*: Accaten (E), Bon-ten, Cison-ten, Hahan-ten (E), Hahan-tenn, Haute-ten, Seni-tennis (gen), Andos-ten, Andos-tenni (dat), Andos-tenno (dat).

*-tto*(*n*)-, *-to*(*n*)-: Andos-ton, Andos-tonis (gen), Lohi-tton (dat), Nescato (E) eta Alardos-to (j).

*-xso-*: Bi modutara egokitu daiteke:

*-xsus*, *-xsi*: Bonxus, Bonxsus, Bonxi (gen), Hanna-xus, Lohi-xsi (gen) [aldaera Lohisi (gen)], Uloho-xo (dat) [aldaera Uloho-ssii (gen)]. Ozenen atzetik *-so* aldaera: Narhon-sus, Mon-sus, eta agian Har-si (gen). Ematen du zenbait kasutan 3. deklinabidea hartu duela: Uloho-xis (gen), Dunoho-xsis (gen). Beste analisi mota baten arabera, pentsa daiteke kasu hauetan –xs- luzapen bat dela.

*-xso*(*n*)-: Andere-xo (E), Andere-xso (E), Bonxsoni (dat), Erhe-xoni (dat. E), Ombe-xonis (gen), Sembe-xonis (gen), Sembe-xsonis, Seni-xsonis (gen). Jainko izenen artean: Baicorri-xo, Baigori-xo, Ilurberri-xo, Ilurberri-xon[ eta ziur asko Arixo, Arixoni, eta Ilixoni izenetan. Zenbait kasutan *-so*(*n*)- aldaera: Hauten-soni (dat. E), eta behar bada Harausoni (j), Harousoni (j).

Atzizki guztiek ez dute segurantza maila berdina, lekukoen kopurua urria delako edo analizia beste modu batera egin daitekeelako. Ematen du izen batzuek atzizki sudurkari bat daramatela, *Belexenn-* kasu nabariena delarik, baina sudurkariaren aurrean agertzen den bokala ezberdina denez zaila da kasu guztiak atzizki bakar baten aldaerak

bezala onartzea. Gainera, arazoa zaildu egiten da oinak bere aldetik azalpen garbirik ez duenean.

Kontutan hartu behar da atzizkiak latin gramatikara egokitu zirela, erregela orokor batzuk jarraituz, nahiz eta egokitze honetan zalantza batzuk egon. Atzizkiak bokalez bukatzen zirenean aukera bat baino gehiago zuten latin desinentzietara egokitzeko, izenaren sexu erreferentziak bere eragina zuelarik egokitze honetan. Andrazkoen izenak *-e* bokalez bukatzen zirenean —nahiz oin hutsak zein atzizkiz osatuak izan, *Andere* eta *Anderese*, kasu—, beti *-n* enborreko hitzen antzera deklinatzen ziren, hau da: nom. *-e*, gen. *-enis*, dat. *-eni*. Berdin gertatzen zen *-o* bokalez bukatzen zirenetan, *Andrecco-ni* edo *Erhexo-ni* (dat.) formek erakusten dutenez. Gizonezkoen izenetan, aldiz, gauzak ez ziren hain sinpleak; arrazoia latinaren gramatikan dago, ezen bukaerako *-o* nominatibo formatzat hartzen bazen, *Cicero*, *-nis*-en antzera egokituko zen, modu erraz eta garden batean, *-cco* eta *-xso* atzizkiekin gertatzen den bezala. Baina latinak bazuen gehienbat maskulinoez osaturiko *o*-enborreko hitz klase ugari bat, beste aukera bat ematen zuena; andrazkoen izenetan ez bezala, *-e* batez bukatzen ziren akitaniar izen maskulinoak latinezko *o*-enborreko hitzak balira bezala deklinatu ziren, *sembe-* izenak agerian uzten duenez; hau da, *Sembe* bokatibotzat hartu ondoren, latinezko *domine* bezala, nom. *Sembus* eta gen. *Sembi* atera ziren analogikoki. Horregatik pentsa daiteke *Hannabi* (gen.) forman ere dagoen atzizkia **-be* izan daitekeela, goian esan dugun bezala. Baina *Bonxsus* (nom.) /*Bonxsoni* (dat.) bikoteak aditzera ematen du egokitze modu ezberdinak egon zitezkeela: batean 2. deklinabidetik egokitu dena, bestean *-n* enborreko eredua jarraitu duena. Badirudi 2. deklinabidetik egokitzeko joera beste izen klase batzuetara ere hedatu zela, adibide garbiena *Senius* delarik; latinak bazuen *-i* enborreko hitz klase bat, baina nominatiboan *-i-* gorde zuten hitzak (*classis*, *-is* antzera) asko ez zirenez gero ezin izan zuten bere eredura hitzak erakarri. Kontsonantez bukatzen diren izenetan datuak ez dira hain argiak, ozenen kasuak salbu: *-ten*(*n*) eta *-tar*(*r*) atzizkietan kontsonante ozena bikoizteko joera garbia dago latinezko desinentziaren aurrean; joera nahiko erregularra denez, *-tenn* eta *-se*-ren arteko ezberdintasuna adierazteko balio du. Txistukariz amaitzen zenean izena, batzuetan 3. deklinabidetik egokitzen zen, *Ulohox-is* (gen) bezala, eta beste batzuetan 2. deklinabidetik, *Ulohox-o* (dat) eta *Ulohoss-ii* (gen) formek iradokitzen dutenez. Goian esan denaren arabera, /andots/ ahoskatzen zen izena ia beti 2. deklinabidetik egokitua aurkitzen dugu: *Andossus*, *Andoxus* (nom.), *Andossi* (gen.), *Andosso* (dat.); baina *Andos* eta *Andus* adibideen arabera izenak ez ziren beti latin deklinabidera egokitu, batzuetan bere hartan gelditu baitziren. Kasu batzuen analisia zalantzazkoa da; *Hannas* eta *Hannaxus*-en aurrean ez dakigu /hannats/ bezalako izen bakarra onartu behar dugun, bi modu ezberdinetan egokitu dena, edo bata *Hanna* oin hutsa den, zeini latinezko *-s* gehitu zaion nominatibo maskulinoa dela adierazteko, eta bestea *Hanna-xs(o)* deribatua.

Luzapen huts ez diren atzizkien eiteari erreparatzen badiogu, gehien lekukotzen dena KV(R) formakoa da: *-co*, *-to*, *-ten*, *-tar*, lehengo kontsonantea ahoskabea delarik. Hauen ondoan, lehenengo kontsonantea ahostuna duten atzizkiez osatutako izenak oso urriak dira, **-be* (edo agian *-bo*)-ren eratorriak salbu. Hagenbach-eko xafletan agertu berri zaigun *Sembedonis* (gen.) izenaren arabera, ematen du *-do* atzizkia ere onartu behar dugula. Txistukariz hasten zirenak, *-x(s)o-* eta andrazkoen *-se* batez ere, nahiko erabiliak ziren. Beste kontsonante motaz hasten zirenak ia anekdotikoak dira: *-rro*, esate baterako. Nabarmentzekoa da sudurkariak luzapen itxurazko atzizkietan soilik lekukotzea, hots, *-nn*, *-enn*, eta ez **-nV-* itxurazkoetan.

Esan bezala, akitaniar korpusean izen konposatuak urriak dira, gehienak jainko izenetan lekukotzen direlarik: 50 jainko izen akitaniar artean, 15 inguru dira konposatuak: ]*m-berri*, *Aher-bels-te*, *Alar-doss-*, *An-doss-*, *Ars-ilunn-*, *Asto-ilunn-*, *B*(*u*)*ai-gori-*, *E-berri*, *Ede-lati*, *Heraus-corri-*, *Horo-lati*, *Ilun-ber*[, *Ilur-berri-*, [*I*]*lur-gorr*[. Osagai batzuk izen bakunetan ere ageri dira, beste batzuk soilik konposatuen bigarren osagai gisa lekukotzen direlarik: lehenengoen artean *Alar*, *Bels-* (*Belex*-en aldaera gisa hartuz), *Ilunn-*, *Heraus-* (*Haraus* eta *Harous-* en aldaera bada), *Iluro* eta bigarrenen artean *-berri*, *-gorri* eta *-lati*, azken hau akitaniartzat jotzen bada. *Alardosso* eta *Alardosto* izenen ondoan *Alar* forma bat dokumentatu izanak aukera ematen du *-doss-* osagai baten errealitatea onartzeko, *Andos-* pertsona izenaren analizian lortutako ondorioa bermatuz. Hitz elkartuetan duten tokia eta euskal ordainek eman dezaketen informazioa kontuan harturik oinak izen edo izenlagunak izan daitezke: *Aher-*, *Alar-*, *Ars-*, *Asto-*, *Heraus-* izenak badira, beti bigarren tokian agertzen diren *-berri*, *-gorri* eta *-bels* osagaiek izenlagunak izateko aukera handia dute. Pertsona izenetako hitz elkartu guztiak, oso gutxi izateaz gain, bi osagairen bitartez egin dira, *-belex* eta *-bon*: *Bon-belex*, *Bon-silex*, *Har-belex*, *Gisson-bonn* eta *Seni-ponn*.

Esan daiteke akitanierak ez zuela aurrizkirik, izen bakarren batek beste ondorio batetara bultzatuko balu ere: *Andos-* oinaren gainean osatzen diren izenen artean batek harrigarrizko *Pi-* darama, *Piandosponnii* (gen.), beste inon aurkitzen ez dena. Hagenbach-eko xafletako *Obbelexxi* (gen.) forma deigarria ak. *Belex*-ekin lotzen bada, hitz hasierako *Ob-* geldituko litzaiguke azaldu gabe. Behar bada kasu honetan *Obbellegin*[ antzeko izen galiar baten eragina izan beharko genuke kontuan akitaniar izenaren itxura azaltzeko orduan (De Bernardo 2010). Dudarik gabe hitz elkartuen eskasia da akitaniar onomastikak erakusten duen ezaugarri nabarietako bat, batez ere aldameneko galiar zein iberiar onomastikarekin erkatzen badugu.

### *3.1.4. Fonemak eta grafia*

Akitanieraren sistema fonologikoa aztertzerakoan ezin dugu ahaztu heldu zaigun informazioa, onomastikoa izateaz gain, latindar alfabetoan trasmititu zaigula non letrek printzipioz latinaren soinu ezagunen adierazpide diren. Idazkera adaptazio kasu gehienetan bezala, hizkuntza bietako soinuak berdinak edo oso antzekoak zirenean ez zen zaila izango latinezko soinua adierazteko erabiltzen zen letra akitanierazko soinu berdina adierazteko erabiltzea. Normalean kasu hauetan koherentzia handia erakusten dute adibide guztiek. Baina normala izaten da, baita ere, hizkuntza batek besteak baino soinu gehiago edo gutxiago izatea, beste modura esanda, oposaketa gehiago edo gutxiagoz baliatzea. Konparazioaren bidetik dakigu akitanierak bi txistukari ezberdin izan behar zituela, geroko euskarak duen bezala, alde batetik *Sembe*-k duena eta bestetik *Gison*-en dagoena, baina latinak bat bakarrik zuenez gero akitanierak ez zuen modurik, edo hiztunek ez zuten aurkitu biderik, hizkuntzako oposaketa grafian adierazteko. Alderantziz, latina akitaniera baino aberatsagoa zen kontsonante ezpainkarietan, eta hizkuntza biek zuten /b/-ren ondoan, bazituen latinak /p/ ahoskabea, /m/ sudurkaria eta /f/ frikaria ere. Soinu hauek adierazten dituzten letrak soberan izan beharko lituzke, beraz, akitanierak; korpusari so egiten badiogu, ikusiko dugu F ez zela inoiz erabili, eta P eta M /b/ fonemaren aldaera fonotaktikoak adierazteko erabili zirela: txistukarien ostean lehenengo kasuan (*Andos-ponn-)* eta asimilazioaren ondorioz bigarrenean (*Bonxus* > *Monsus*).

Alfabetoek normalean letra hilak edo usadio gutxikoak izaten dituzte, alfabetoaren lehenengo garaietan erabiliak izan arren, gero hizkuntzaren garapenarengatik funtsio edo zeregin handirik gabe gelditu direnak; horrelakoa zen latinezko H. Latinak jatorriz zuen aspirazioa galdua zuen Akitaniarrek alfabetoa ikasi zuten ordurako, baina letra bera eta haren balore fonetikoa ezaguna zenez grekerazko maileguetako aspirazioa adierazteko erabiltzen zen. Noizbait bi bokalen arteko hiatoa ere adierazi zuen, lat. *ahenus*-en ikusten den bezala. Akitaniar korpusean horrenbeste H egoteak, eta ez bakarrik bokalen artean, bazik eta hitz hasieran, *-n*, *-r* edo *-l* ozenez bukatzen diren silaben ondoren datozen silaben hasieran (hots, *-nh-*, *-rh-* eta *-lh-* multzoetan) edo *-th-* antzeko grafia konplexuetan, aspirazioa hizkuntzaren ezaugarri nabarienetakoa zela erakusten digu, dudarik gabe.

Benetako problemak latinean ordainik ez zuten soinuak adierazteko orduan datoz. Badirudi akitanierak zorionez orokorrean latinak baino fonema gutxiago zituela eta aipatu problema ez zela oso larria izan; hala ere, uste dugu akitanierak, geroko euskarak bezala, latinak baino txistukari sistema aberatsagoa zuela. Txistukarien arteko artikulazio puntuaren ezberdintazuna ez zuten adierazi, baina ematen du afrikarien eta afrikatuen artekoa lortu zutela modu nahiko sistematiko batean grafian islatzea: afrikariak beti S baten bidez eta afrikatuak X, XS, inoiz SS erabiliz. Kontuan izan behar da latinean X letrak, —eta *uxsor* hitzak erakusten duen bezala, XS aldaerak ere—, /ks/ kontsonante

multzoa adierazten zuela. Galiar korpuseko zenbait izenetan, *Brixanti* edo *Rextugenos*-en esaterako, X letra /χ/ frikari belarea adierazteko erabili izan zen, grekerazko X letrak zuen baloretik hurbilago. Akitanierazko adibideak ezin dira halan azaldu, txistukarien balorea beste aldaera batzuetatik ondorioztatzen delarik: *Belex(s)*-i *-bels* dagokio hitz elkartuaren bigarren osagai denean, edo jainko izenetan lekukotzen den *-xo*, *-xe* atzizkiak *-so* eta *-tse* aldaerak ditu, *Baicoriso* edo *Heraus-corri-tse*-ren kasutan; galierazko /ds/ afrikatu horzkaria Galian zehar <DD, ĐĐ, ΘΘ, DS> letra konbinazioz idatzi zena —ik. *Aθθedo-*, *Ađđedo-*, *Adsedo-* galiar izen arrunta—, Akitanian *Axsedo* grafiatu zen, nahiko garbi erakutsiz XS letra multzoa soinu afrikatua adierazteko erabili zela modu sistematiko batean (Gorrotxategi 1984, Lambert 2002).

Bokalak eta diptongoak. Ikusirik bokalen grafia oso iraunkorra eta batere aldaerarik gabekoa dela, pentsa daiteke hizkuntzak bost bokaleko sistema orekatu eta sinplea zuela; euskal ordain onenak dituzten izenek euskararen bokal berberak dituzte: *Andere-*, *Sembe-*, *Seni-*, *Cison-*, *Ilunn-*, etab. *Heraus- / Haraus-* bikotean antzeman daitekeen bezalako aldaerak oso gutxi dira. Diptongo ugarienak */au/* (*Hautense*, *Laurco*, *Heraus-*), eta */ai/* (*Baisothar*[, *Baigorri-*) dira; /ou/ normalean galiar jatorriko izenetan aurkitzen da (*Touta*, *Toutanno-*), *Axtouri*-n agertzen bada ere; /eu/ diptongoa *Neure-* oinean lekukotzen da bakarrik. /ei/ akitaniar ikuspuntutik ilunak diren *Adeili* eta *Beisirisse*-n ageri da, eta latinezko desinentziatzat har daitekeen *Borei*, *Borsei* eta *Adei* genitibozko formetan.

Latin grafia usuaren arabera, semikontsonanteak izan daitezkeen /w/ eta /y/ kasuak egon badaude (*Vaxo*, *Iarbonis*), baina oso urriak izateaz gain ez dute euskal ordainik; nabaritzekoa da, aldiz, /w/ zuten galiar izen batzuk B letraren bidez idatziak izana, hala nola *Bocontiae* (< *Vocontia*) edo *Bersegi* (gal. **wer-sego*-tik baldin badator).

Latin alfabetoak trabari ezpainkariak (p, b), horzkariak (t, d) eta belareak (k, g) adieraz zitzazkeen. Grekerazko trabari aspiratuak <ph, th, kh> konbinazioez idatzi ziren. Letra errepikatu edo geminatuak kontsonante luzea markatzen zuen. Akitaniar korpusean letra eta konbinazio gehienak aurkitzen ditugu, baina ezin dugu horregatik latinean zituzten balore berdinak onartu. Ugaritasuna, kokapena eta aldaerak izan behar ditugu kontuan letren balorea aztertzeko orduan.

Ezpainkarien artean, goian aurreratu bezala, <p> oso urria da eta kasu gehienetan /b/ fonemak txistukarien atzean jasan duen ahoskabetzea adierazten du (*Cisson-bonnis* vs. *Andos-ponni*; *Hannabi* vs. *Harspi*), beste zenbait fonema ahostunekin gertatzen den bezala. Aldaera markatu hau inoiz testuinguru libretan ere erabili zen, *Seni-ponnis* kasu. Galiar izenetan, aldiz, /p/ fonemaren esparrua oso zabala da testuinguru gehienetan lekukotzen dela: *Carpento*, *Eppamaigi*, *Arpenino*, *Sapalonis*, etab.

Horzkari biak, /t/ eta /d/, lekukotzen dira testuinguru gehienetan. Ahoskabea hitz hasieran (*Talsco-*, *Tarros*, *Torste-*, *Totto-*) eta bokalez edo ozenez bukatutako oinari

gehitzen zaion atzizki hasieran (*Sembetar*, *Nescato*, *Baeserte*, *Hahantenn*) aurki daiteke. Azken adibideak ez du ahots asimilaziorik erakusten. Grafia geminatuak (-tt-) ezin zuen latinean ohikoa zen soinua adierazi, bestelako ñabarduraren bat baizik: Mitxelenak suposatu zuen *-t*(*t*)*o-* eta *-t*(*t*)*en-* atzizkietako geminatua trabari gogorra edo fortis-a adierazteko erabili izan zela, *-t*(*h*)- letrak fonema berberak testuinguru berezietan, batez ere azentuaren eraginaren azpian, jasatzen zuen aspirazioa markatzeko balio zuen bitartean. Arrazoi berdinak azaltzen du, haren iritziz, *Talsco- : Halsco* aldaera, suposatzen bada bigarrena lehenengoaren garapen erregularra dela (táls- > *tháls- > háls-). Horzkari ahostuna /d/ oso normala da hitz erdian, nahiz bokal artean zein ozenen atzean: *Odanno*, *Idiatte*, *Andere*, *Aldeni*, *Erditse*. Hitz hasieran ere lekukotzen da (*Derro*, *Deri*), puntu honetan protoeuskararako berreraikitzen zenetik aldenduz. Pentsa daiteke aipatu izen horiek ez direla euskal leinukoak, Bähr-ek uste zuen bezala, baina *Andoxs-* eta *Alardos-* izenetan berezi dugun *-dots-* osagaiak artean autonomia balu hizkuntzan, Hagenbach-eko xafletan agertu den *Doxxi* (gen.) izena hitz sinplearen adibidea izan zitekeela onar genezake, Galiako zenbait tokitan antzeko izenak agertu izan arren (*Dosso*, *Dossonius*, etab. azken hauek *-n* enborrekoak badira ere).

Belarei dagokienean, /g/ ahostuna hitz hasieran (*Gerexso*) zein hitz erdian (*Erge*, *Ilurgorri*, *Baigorri*) lekukotzen da. Deigarria da *Gison-donni*-ren ondoan *Cison-* ageri dela beste hiru aldiz, *-gorri*-ren ondoan *-corri* ere irakur daitekeen bezala. Txandakatze honen arrazoia hizkuntzan bilatu behar bada, eta ez C eta G letrek latindar epigrafian itxuraz aldatzeko eta elkar nahasteko duten joeran behintzat, akitanierazko trabarien ezaugarriren bati zor zaio; Mitxelenaren hipotesiaren arabera, akitanieraren trabariak gogorrak edo ahulak, hots, fortes eta lenes, izan zitezkeen, printzipioz latinezko ahoskabe eta ahostunekin parekatzen zirenak; gainera, fortes-en energia latinezko ahoskabe arruntena baino handiagoa zenez askotan geminatuen bitartez idazten dira: hala azaltzen dira zenbait atzizkien grafia geminatuak: *-tto*, *-tten*, *-cco*. Bestalde, silaba azentudunetako trabariek beste silabetakoak baino energia gehiago zutenez, normala zen berez ‘lenis’ zena hitz hasieran edo atzizki azentodunaren hasieran apur bat gogortzea eta latinezko ahoskabeak idazteko erabiltzen ziren C edo P letren bitartez idatzi izana, *Cison-* edo *(Seni-)ponnis*, alegia. Fortes trabariak, izatez ahoskabeak zirenak, silaba azentodunetan jasotzen zuten energiarengatik hasperendun bihurtu ziren inoiz ezaugarri hori grafian ageraraziz, *-thar* atzizkian esaterako. Hipotesia akitaniar korpusean antzematen diren txandaketak ez ezik protoeuskararen ezaugarriak ere azaltzen saiatzen da, nahiz eta zenbait adibidek problemak sortu: hipotesi honen arabera, goian aipatu *Talsco-* : *Halsco-* txandaketak edo ak. *Aher-* eta eusk. *akher*-en arteko egokitasunak azalpen txukuna jaso ahal badute, gertakaria silaba diferentetan gertatu izanak ez du testuingurua behar bezala argitzen (Mitxelena 1954a, Gorrotxategi 1984).

Goian aurreratu dugun bezala, akitanierak dituen [m] guztiak /n/ edo /b/ fonemen aldaerak dira: lehenengo kasuan /n/-ak ezpainkari baten aurrean jasatzen duen asimilazioarengatik (**sen-be* > *Sembe-*; **on-be* > *Ombe-*) eta bigarrenean aldameneko sudurkariaren eraginez (*Bonxsus* : *Monsus*), euskararen historian **bini* > *mihi* bilakaerak erakusten duen bezala. Esandakoa kontuan harturik, *Gomferani* herri izenak erakusten diguna interesgarria da, ezen F aurrean idatzi den M-ak aditzera ematen baitigu akitaniarrek **Conferani* latin hitzaren /f/ ezpain-horzkaria /ɸ/ ezpainkari huts bihurtu zutela, aurreko sudurkariaren asimilazioa ahalbidetuz; bistan da, idazkera honen atzean sumatzen den fenomenoa lat. *fagus* eusk. *bago* bihurtu duenaren parekoa dela. Akitaniar korpusean atzematen den urritasun aldean, /m/ erruz ageri da galiar izenetan, *Dunomagius*, *Solimuti* eta beste askotan. *Matico* galiar mailegu baten gainean sortutako izena izan daiteke: gal. *mati* 'maite' + *-co* atzizki akitaniarra.

Sudurkari horzkaria, aldiz, oso ugaria zen, nahiz grafia sinplean zein geminatuan: hitz hasieran beti N- baten bidez idazten da (*Nescato*, *Narhonsus*, etab.), hitz bukaeran -NN geminatua agertzeko joera dagoen bitartean (*Edunn-is*, *Hahann-is*, *Sembetenn-is*, etab.); bokalartean grafia biak ageri dira, hizkuntzan esanguratsua den oposaketa baten adierazle gisa: beti *-n-* bakar batez idatziriko *Seni*-ren ondoan *Hanna-*, *Hunnu-* edo *Enne-* izen oinek ez dute geminatua besterik ezagutzen.

Datu gutxiago egon arren, ixurkari eta dardarkariek antzeko egitura erakusten dute, hots, hitz hasieran grafia sinplea, hitz bukaeran geminatuaren aldeko joera eta bokal artean grafia bien arteko oposaketa. Hala, dardarkariz amaitzen diren morfemek *-rr-* izango dute desinentzien aurrean, *Ulucirr-is* edo *Hotarr-is* izenetan bezala, bokal arteko oposaketa *Andere*, *Eresoni* / *Ilurberri*, *Baigorri-* adibidetan ikus daitekeenez. Hitz hasieran, aldiz, ez da dardarkaririk lekukotzen, korpusaren eta ondorioz hizkuntzaren ezaugarri nabarietakoa suertatzen delarik, batez ere galiar onomastikan dardarkariz hasten diren izenak beste edozein soinuz hasten direnak bezain ugariak direnean; galiar jatorrikoa da, hain zuzen, Akitaniako 650 izen indigenen artean dardarkariz hasten den izen bakarra, *Remus*.

Ozenen artean ikusi dugun morfemen hasiera edo bukaeren araberako banaketa txistukarien artean ere errepikatzen da. Goian esan duguna gogoratuz, orokorrean bi grafia daude, bata S sinplea eta bestea X edo XS konplexua, hirugarren batek —SS alegia— gauzak apur bat zailtzen dituen arren. Hagenbach-eko xaflak ezagutu baino lehenagoko korpusean adibide guztiak, *Xuban* jainko izena salbu, S- batez hasten ziren, *Sembe-*, *Seni-*, *Silex*, *Sosonn-*, etab.; morfema bukaeran, aldiz, X(S) agertzeko joera handia zegoen: *Belex*, *Berhaxs-is*, *Silexs-i*, etab. Bokal artean espero genukeen oposaketa *Cison*, *Sosonn-* izenek alde batetik eta *Oxson*-ek bestetik bermatzen zuten. Grafia geminatuaren erabilera ez da hain sistematikoa: badirudi -SS- gehienetan XS-ren aldaera dela, *Andoxus* : *Andossus*,

*Oxson* : *Osson*, *Bihoxus* : *Bihossi* bikoteetan ikusi daitekeenez, baina S bakunarekin ere txandakatzen da inoiz, *Cison-* : *Cisson*-en kasuan bezala. Orokorrean esan daiteke grafiatu nahi diren soinuak gutxienez bi direla, bata normalean S baten bidez eta bestea XS edo SS grafien bidez idatziz. Gogoratuz alde batetik alfabetoak ezin zuela txistukari horzkari eta albeolarren arteko bereizketa egin, *Cison-* eta *Sembe*-ren artekoa alegia, eta bestetik grafia horien banaketa kokapenaren menpe dagoen kontua dela, badirudi S letra txistukari frikariak idazteko erabili zela, X(S) eta SS grafiak txistukari gogorren edo afrikatuen adierazpideak zirelarik. Azken grafia hauen ordez inoiz S bakuna aurkitzeak (*Lohixsi* : *Lohisi*-ren kasuan, esaterako) ez du analisia indargabetzen, pentsatzen badugu kasu honetan idazleak letra eta usadio markatu gabea erabili zuela soinua idaztekoan. Era berean, *Andose* epitetoa S bakun batez idatzi izanak ez du esan nahi izen horren soinua hamaika aldiz *Andox-* edo *Andossus* idatzi zen izenarena ez zenik, kasu honetan idazleak afrikazioa grafian markatu ez zuela baizik.

Haguenbach-eko xaflek datu interesgarriak ekarri dituzte eztabaida honetara, lehenagotik ezagunak ziren izen eta grafia ohituren ondoan goian aipatu dugun banaketaren kontra doazen hiru adibide eman dituztelako, *Xalinis*, *Xembe* eta *Xembesus*. Grafiatzeko modua ezberdina bada, izenak ordea ezagunak dira, *Salinis* eta *Sembe*-ren aldaerak besterik ez direlako. Adibide hauek S eta X grafiek islatzen zuten soinuen arteko lotura estua bermatu besterik ez dute egiten, X letrari azken garaian eman nahi izan zaion azalbide batzuk deuseztatuz, baina aldi berean hitz hasierako soinu gogor edo markatuen arrazoia eskatzen dute. Adibideek garbi erakusten dute X grafia S-aren aldaera dela eta ez S-ari kontrajartzen zaion ezer diferenterik, hots, fonema berririk. Gauzak hala, ikusirik aldaeraren arrazoia ez dagoela kokapenean edo testuinguru zehatz batek agintzen duen zerbaiten, pentsa daiteke hizkuntzak bi aldaeren artean ezberdintasunak egiteko ahalmena zuela: apur bat harrigarria bada ere, azalbide errazena zera da, grafia horien bitartez adierazten dena euskarak bere historia dokumentatu osoan ezagutu duen bustidura adierazkorra dela. Erdiaroko testuetan *cheme*, *chemeto* eta *xeme* idazkerek gertakaria lekukotzen dute. Beraz, adibide berri hauek erakusten digutena zera da, batetik bustidura edo palatalizazio adierazkorra hizkuntzak indarrean zuen prozedura zela, eta bestetik normalean soinu afrikatuak adierazten zituzten letrak erabili zituztela aldaera hauek ere grafian adierazteko. Agian, ildo honetatik ulergarriago egingo zaigu *Cisson-bonnis*-en ageri den SS geminatua, [gixon-] aldaera palatalizatu baten grafia dela uste badugu (Gorrotxategi 2003).

Bukatzeko, akitaniar izenen grafiari eta hortik atera daitezkeen ondorio linguistikoei begirada orokor bat ematen badiegu, hizkuntzaren zenbait ezaugarri sistematiko ageri zaizkigu, inguruetako hizkuntzetatik hura argi eta garbi bereizten dutenak. Sistemaren elementuei dagokienean, hizkuntzak bost bokal ditu, luzapen oposaketarik gabe. Trabarien

artean, ezpainkarien klasea oso defektiboa da, ez baitu ez /p/, ez /f/ eta ez /m/. Horzkari eta belareek bina fonema dute, bata fortis, latinezko ahoskabeen bitartez, askotan grafia geminatuan, idazten dena, eta bestea lenis, latinezko ahostunen bitartez grafiatzen dena. Zenbait kasutan, agian azentuaren eraginaren azpian dauden silabatan, fortes edo gogorrek aspirazioa irabazten dute, lenes edo ahulak ahoskabetzen diren bitartean.

Sudurkari bakarra /n/ da. Letra bakuna eta geminatuaren arteko banaketak lenis/fortis antzeko oposaketa bermatzen du, gainontzeko ozenetan (/l/, /r/) eta txistukarietan ere ematen zena. Hizkuntzak ez zuen /r/ hitz hasieran eta txistukarien sistema aldameneko hizkuntzena baino aberatsagoa zen. Buztidura edo palatalizazio adierazkorra, pertsona izenetan nolabaiteko hurbiltasun edo samurtasuna adierazteko erabiliko zena, hizkuntzaren baliabide bat zen. Azpimarratu behar da nola akitaniarrak baliatu ziren latin alfabetoak eskaintzen zizkien bitartekoez txistukari afrikatuak eta aldaera buztiak modu batean eta txistukari sinpleak bestean bereizteko.

Aspirazioa da sistemaren ezaugarri nabarienetako bat, inguruko hizkuntzetatik akitaniera bereizten duena, ezen ez galiarrak, ez zeltibererak ezta ere iberierak ez zuten aspiraziorik bere baitan. Akitanierak hitzaren posizio askotan ezagutzen du, hitz hasieran eta bokal artean oso normala delarik: *Harsi*, *Hautense*, *Harbelex*, *Bihoxus*, *Lohixsi*, *Aherbelste*, etab. Bereziki ugaria da bokal berdinen artean (*Dunoho-*, *Uloho-*, *Hahan-*, *Leherenn*, etab.) eta ozenen atzean (*Erhexo-*, *Berhaxs-*, *Lelhunn-*, *Elhe* etab.) Adibideen arabera, aspirazioa ez zen beti idazkunetan grabatu, H letradun adibideen ondoan badaudelako beste batzuk H-rik gabe idatzi zirenak, hala nola *Artehe* : *Arte*, *Leherenn* : *Leren*, *Bihoxus* : *Bioxxi*, *Barhosis* : *Barosis*, *Erhexoni* : *Ereseni*, *Elh*(*e*) : *Ele*. Euskararen aldean aspirazioa ez zen lehenengo bi silabetara mugatzen, *Dunoho-* edo *Osaherrus* izenek probatzen dutenez, adibide gehienak hasierako bi silabetan egon arren. Eta euskaran ez bezala, badaude izen batzuk bere barnean bi aspirazio daramatzatenak, *Hahanni* (dat), *Hahanten* nabarienak direlarik.

Aspirazioa hain ugaria izanik korpusean zehar, harrigarria gertatzen zaigu itxuraz euskal ordain ontzat jo ditzakegun zenbait izenek behar zuketen aspirazioa ez izatea. Goian aipatu ditugu *Arixo* eta *Arixoni* jainko izenek sortzen dituzten arazoak, horietako bat aspirazioaren falta delarik. Luchairegandik hasita ikerle askok uste izan dute ak. *Andossus* izenak eusk. *handi*-rekin zerikusia izan zezakeela, baina aspirazioaren falta eragozpen handia izanik, beste ikerle batzuek —Bähr (1948) esaterako— nahiago izan dute haren jatorria galiarren esparruan bilatu. Haguenbach-eko xafla batean agertu berri den *Handos* grafiak berriro izena akitanieraren esparruan kokatuaz gain grafia defektiboen auzia gogoratzen digu.

Akitaniar onomastikaren osagairekin gertatzen zen bezala, hizkuntzaren fonemak, grafiak eta euskal ordainak beti zehaztasun eta segurantza guztiarekin azaltzen ez badira ere, ezaugarri guztiak bata bestearen ondoan pilatzen direnean sortzen den multzoa hain

berezi eta sistematikoa da non Haguenbach-eko xaflak agertu zirenean ikerlariek ez zuten batere arazorik izan hango idazkunak Akitaniarrak zirela onartzeko, ekoiztu ziren tokitik milaka kilometrotara aurkituak izan arren. Berdin gertatzen da Sardiniako Ardara herrian ediren berri den izen honekin: *Orcoeta Bihonis* (*f.*); epigrafeak esaten digunean pertsona hori Akitaniar kohorte bateko gudaria zela, izenetik beretik izan genezakeen zantzua bermatu baino besterik ez du egiten.

### 3.2. Hispania

Akitanian gertatzen zen bezala, Ipar Hispaniako lurralde guztiak ez dira berdinak latin epigrafiari dagokionean, batzuk oso aberatsak diren neurrian beste batzuek epigrafe kopuru urria eman dutelako. Banaketa honen arrazoiak ez dira beti berdinak; Ebro ibarrean sumatzen den eskasia arrazoi geologikoengatik azal badaiteke, non harriaren urritasunari urteetako geruza pilaketa gehitu behar zaion azalbide modura, Nafarroako iparraldean, Bizkaian eta Gipuzkoan sumatzen denak arrazoi kulturalak ditu gehienbat, erromanizazioaren eragin mugatuaren ondorioa da, alegia. Hala ere, Araban, Nafarroako erdigunean, ekialderago zabaltzen diren Baskoien lurraldetan eta Errioxan aurkitu diren latin epigrafeetan bertoko onomastikaren isla kontsidera dezakegun izen propio multzo aski handia ageri zaigu. Kronologiari dagokionez, Baskoien lurraldearen hegoalde-ekialdea nahiko goiz sartu zelako Erromaren interesen esparruan, datu batzuk errepublika garaikoak dira, Ascoliko brontzea delarik informazio aberatsena eman duen iturria (K.a. 89koa). Joan den mendearen hasieran Schuchardtek aztertu zuen lehenbizi brontze horretako onomastika, orduko ideien arabera, hots, basko-iberismoaren hipotesiaren barne, Akitaniako izenekin konparatuz. Urte batzuk beranduago, Gomez Morenok Hispaniako onomastika indigenaren azterketari ekin zion, antzinako hizkuntza paleohispaniarren esparrua zein izan zitekeen jakiteko informazio preziatua eman zezakeelakoan (1949). Ikerketa horietatik ondorioztatzen zena ez zetorren bat tradizioak urte luzeetan zehar eta basko-iberismoak XIX. mendean esaten zutenarekin. Epigrafeetan lekukotzen ziren pertsona izen indigenek osatzen zuten mapa tradizioak suposatzen zuena baino aberatsagoa eta konplexuagoa zen hizkuntzen aldetik, baina aldi berean ez zuen euskal geruzarik inon ere bermatzen: Arabako eta Lizarraldeko onomastika indoeuroparra zen bitartean, Nafarroako gainontzeko lurraldeak iberieraren esparrukoak ziren. Akitanian hain nabariak ziren euskal ondareko izenen arrastorik ez zuen aurkitu Gomez Morenok Espainako euskal lurretan.

Lergako inskripzioa 1960an agertu zenean, berehala ikusi zen hango izen bat, *Ummesahar*, euskaratik erraz uler zitekeela, (*h*)*ume* eta *zahar* euskal hitzekin lotuaz, eta beste biak, *Narhunges* eta *Abisunhar,* hain zuzen, Akitaniako izen multzoan sar zitezkeela

bai osagaien aldetik bai fonetika arrazoiengatik ere; lehenengoak ak. *Naron-sus* izenean zuen ordain bikaina, bigarrenak akitanieraren ezaugarritzat jo daitekeen *-nh-* soinu konbinaketan zuen alderakide sendoena (Mitxelena 1961-62).

Harrezkero astiro baina geldiunerik gabe agertu dira akitaniar kutsuko izenak Baskoien lurraldean, batez ere Nafarroako erdigune, ekialde eta Aragoiko Cinco Villas inguruetan. Segidan zerrendatuak daude gaur egun arte Euskal probintzietan eta Baskoien lurraldean agertu diren euskal geruzako izenak.

| Pertsona izenak | Jainko-jainkosa izenak |
|---|---|
| *Abisunhari* (dat /gen?). Lerga, Na. | *Errensae.* Andion, Na. |
| *Abisunsonis* (gen). Izkue, Na. | *Helasse.* Miñao, Araba |
| *Val. Beltesonis* (gen). Oiartzun, Gip. | *Itsacurrinne.* Izkue, Na. |
| *Dusanharis* (gen). Sofuentes, Z. | *Larrahi edo Larrahe.* Mendigorria, Na. |
| *Illuna* (?). Iruña Oka (Veleia), Araba | *Larahe.* Iruxo, Gesalatz, Na. |
| *Luntbel…* Durruma, Araba | *Loxae.* Arginaritz, Girgilao, Na. |
| *Lutbelscottio.* Durruma, Araba | *Losae. Zirauki,* Lerate eta Iruxo, Gesalatz, Na. |
| *Narhungesi* (dat / gen). Lerga, Na. | *Selatse, Selaitse.* Barbarin, Na. |
| *Naru[ns?]eni* (dat, M). Sofuentes, Z. | *Urde.* Muzki, Gesalatz, Na. |
| *Serhuhoris* (gen).Valpalmas, Z. | |
| *Ummesahar fı.* Lerga, Na. | |
| *J̱eihar.* Zaragoza | |

Zerrenda honetan ez da aurkitzen euskal ordain gardenik duen izen edo izen oinik, *Ummesahar* salbu, Akitaniako *sembe-*, *seni-*, *andere-* edo *nescato*-ren parekoak izan daitezkeenak. Pertsona izenen artean, agian, Iruñako *Illuna* andrazko izena izango litzateke begibistakoena, ak. *Ilunn*-i latinezko *–a* desinentzia femeninoa gehituz osatu zena, Fitak harria galdu baino lehen egin zuen irakurketa askoz ere seguruagoa balitz. Gainontzeko pertsona izenei nekez aurkitu ahal zaie euskal ordainik. Mitxelenak Lergako inskripzioari eskaini zion lanean *-sunhar-* osagaia eusk. *zunhar*, *zumar*-ekin lotu zuen, erkaketaren alde semantikoaren ahulezia aitortuz; beranduago aurkitutako *Abinsunsonis* (gen) formak ez luke, gainera, analisi hark bideratzen zuen osagai zatiketa baimenduko.

Hala ere, izen batzuek dituzten osagai edo atzizkiak eta guztiek erakusten dituzten ezaugarri fonetikoak akitaniar korpuseko izenetan ematen direnen parekoak dira. Osagai onomastiko gisa *-bel*, *-bels-*, *-hori*, *illun-*, *narhun-* eta *umme-* (ak. *Ombe*-ren ordaina), eta atzizkien artean *-har*, *-so*, eta ziur asko *-se* femeninoa aipa daitezke. Jainko-jainkosa izenei dagokienean ezaugarri nabariena desinentzia itxura duen azken *-e* da, akitaniar korpuseko jainko izenetan, hutsik edo aspirazioaren atzean, erruz lekukotzen dena; ak.

*Artahe*-ren antzekoa da Nafarroako *Larahe*, *Larrahe*, eusk. *larre*-rekin lotzen bada, batez ere. Mitxelenaren iritxiz *Loxae* (hemen desinentziak latinarenak lirateke) eusk. *lotsa* izango litzateke, besterik gabe.

Azken adibideak gogoratzen digu hizkuntza sailkapenak egiteko orduan argudio fonetikoek duten indarra. Hasteko, zerrenda honetako izen askok aspirazioa dute akitaniar izenek eramaten zuten tokian, hitz hasieran, bokalartean eta batez ere *-rh-* eta *-nh-* soinu konbinaketetan, *Helasse*, *-sahar-*, *Narhun-* eta *Abisunhar*-ek erakusten duten bezala. Akitanian bezala, hitz batek aspirazio bat baino gehiago izan dezake (*Serhuhoris*) eta ez dago hitzaren lehenengo silabetara mugatua. Txistukarien portaera ere oso garrantzizkoa da: ezin da halaberrezkoa izan hiru jainko izenek txistukari afrikatuak markatzeko ohikoak diren grafiak erabili izana, *-ss*, *-x* eta *-ts*, alegia. Era berean, *Itsacurrinne* jainko formak sudurkari geminatua du morfema bukaeran, *-e* desinentziaren aurrean.

Schuchardt eta Gomez Morenoren ikerketen ondoren pentsatu izan da Ascoliko brontzean agertzen diren izen guztiak iberiarrak direla, areago, iberiar onomastikaren egitura kanonikoa eskaintzen dutela. Baina kontuan izanik brontzean jasotzen diren izenak Pirinioetatik Ebro ibairainoko biztanleenak zirela, ezin dugu saihestu batzuk akaso euskal leinukoak izan zitezkeenik: guztien artean *Enneges* da aukera gehien duena, alde batetik ez zelako iberiar izen orokorra, Baskoien lurraldera mugatua baizik, eta bestetik ak. *Ennebox, Ennebon* eta eusk. *Enneco* izenekin dituen loturengatik.

Taulako izenak baskoitzat hartuak izan badira, haien egituran euskara zaharraren ezaugarriren bat antzeman delako izan da. Badaude Baskoien lurraldean izen hauen ondoan beste batzuk, indoeuroparrak ez direla garbi erakutsi arren, euskal eremuan zein iberiarrean sailka daitezkeenak: Uxuen aurkitutako *Lacubegi* jainko izena, esaterako, eusk. *begi*-rekin zein ib. *laku-aŕkis*, *biu(r)-lakoś* izen propioekin lot daiteke. Tafallako inskripzio bateko *Agirsenio Gurtaanbasis f.* (dat.) iberiarra izan daiteke, batez ere aitaren izenaren bigarren osagaia, *-bas,* iberiar osagai arrunta zein orokorra delako. Baina lehenengo izenaren bigarren zatiak *-seni* (zeini latinezko *-o* desinentzia atxikitu zaion) akitaniar onomastikan ditu paralelo garbienak, nonbait iberieraz antzeko osagairik isolatu arren. *Agir*-en zabalgunea, aldiz, handia da iberiar onomastikan, *akir-* osagaiarekin lotzen bada, baina latin alfabetoan heldu zaizkigun lekukoen arabera Baskoien lurraldetik urrun agertu direnek trabari ahoskabea dute. Beraz, ez dakigu kasu hauetan euskal geruzako izenak diren edo etorkiz iberiarrak izan arren nolabait euskal kutsua hartu duten.

Azken fenomeno hau oso argi ikus daiteke jatorriz iberiarrak diren ondoko bi izen hauetan: *Or*[*du*]*netsi* (dat. Muez) eta *Urchatetelli* (dat. Andion). Izen biak, iberiar izen gehienak bezala, osagai binaz osaturiko hitz elkartuak dira: lehenengoarenak *ordun-* eta *-nes* dira Ascoliko brontzeko beste izen batzuek erakusten duten bezala; bigarrenaren osagaiak *urcha-* eta *-tetel* dira. Baina izen hauek, etorkiz iberiarrak izan arren, euskara

zaharraren fonetikara edo ahoskatze arauetara egokitu ziren, lehen kasuan morfema bukaerako txistukaria afrikatua bihurtuz eta bigarrenean, trabari belareak aspirazioa irabaziz eta hitz bukaerako ixurkariak nolabaiteko tentsioa bereganatuz.

Orain arte aztertutako izenak Ebro ibaitik iparraldera agertu ziren eta Baskoien lurralde historikoari dagozkio. Azken urteotan Ebro ibaitik hegoaldera dauden Soriako lurralde garaietan, Cidacos eta Linares ibarburuetan hain zuzen, egin diren aurkikuntzek euskara zaharraren zabalgunea finkatzeko garrantzi handia dute. Epigrafistak, batez ere Espinosa eta Usero (1988), ohartu dira lurralde horretako inskripzioek itxura, marrazki eta ezaugarri orokorrengatik multzo berezi bat osatzen zutela, Calagurriseko hirian aurki zitekeen kulturatik Mesetako zeltiberiar hirietako kulturatik baino hurbilago zegoena. Baina multzoaren berezitasuna ez datza soilik harrien itxuran eta marrazkietan, hango populuaren izenetan baizik. Gauza deigarria da ikustea hango pertsona izen gehienak ez zirela zeltiberiarrak edo zelta ondarekoak, nahiz eta epigrafeak teorian Zeltiberian edo gutxienez lurralde indoeuroparrean agertuak izan; baina, hala ere, ezin dira nahitanahaiez iberiartzat jo.

Hona hemen orain arte argitaratutako izenak:

> *Agirseni* (gen.), *Arancisis* (gen.), *Ar*[…|…]*thar*, *Attasis* (gen.), *Lesuridantaris* (gen.), *Oandissen* (E), *Onse* (E), *Onso*, *Sesenco*.

Azken izena, hots *Sesenco*, Lergako *Ummesahar* hura bezain ulergarria da euskaldun batentzat: *zezen* hitzari bai akitaniar onomastikan eta baita Erdi Arokoan ere oso normala den *-co* atzizkia gehituz sortu den izena, alegia, eusk. *axerko* edo *otsoko*-ren antzekoa.

Gainontzekoak ez dira hain garbiak, baina bi emakumek daramaten *Onse* eta gizonezko baten *Onso* izenak guztiz interesgarriak dira, sexoa atzizki berberaren bi aldaeren bitartez adierazi egiten dutelako: ak. *-so* /*-x(so*) atzizkia, sexu bietako izenak eratortzeko erabilia izan arren —*Sembexson-* eta *Anderexso*-k erakusten duten bezala—, askoz ere ugariagoa da gizonezkoenetan; *-se* atzizkia, ordea, soilik emakumezkoenetan agertzen da. Beraz, akitaniar onomastikan ikusten dugun banaketa berbera aurkitzen dugu Soriako izen bikote honetan. Erroari dagokionez, ak. *Ombe-* izen oinean isola daitekeen **on-* erroa gogoratzen digute, beste aukera batzuk guztiz baztertu gabe, ak. *Bonxsoni* delarik osagaien aldetik formarik hurbilena.

Interesgarria da ondaturik heldu zaigun *Ar*[…|…]*thar*; azken silabako aspirazioak euskararen eta akitanieraren esparrura eramaten du izena, ak. *Haron-thar-ris* (gen.) eta *Baisothar*[ gogoratuz. Gainontzeko izenak ez dira hain erabakiorrak, hala ere *Attasis*-en (gen.) alde ak. *Attaco* gizonezko izena eta ak. *-x*, *-ass-* luzapen afrikatuak aipa daitezke, mesetako zenbait lekutan lekukotzen den *Atta* andrazko izena aintzakotzat hartu gabe. Bestalde, goian esan den bezala, *Agirseni* ez da nahitanahiez iberiartzat jo behar, haren zabalgunea eta bigarren osagaia kontuan hartzen bada.

Soriako lurralde garaietako izen multzo honek, bere kopuru mugatuan, Akitaniako onomastikaren ezaugarri asko ditu: *zezen* euskal ordain gardena, **seni- *atta-*, eta **on-* izen oinak, *-co*, *-so*, *-se* eta *-thar* atzizkiak, *-so* eta *-se* atzizkien arteko sexuaren araberako banaketa eta aspirazioaren presentzia ahaztu gabe. Zaila da pentsatzea ezaugarri guzti hauek halabeharrezkoak izan daitezkeenik (Gorrotxategi 2009).

Segurutzat eman dezakegun arren gizarte horren zati batek behintzat euskara zaharra ezagutzen zuela, ez da hain erraza euskaldun horien presentziaren arrazoia jakitea. Izan daiteke euskara lurralde horretan zelberieraren indartzea baino lehenagoko hizkuntza propioa izatea, Errioxarako Merino Urrutiak aspaldi defenditu zuen bezala; hipotesi honen alde *kalakoŕikoś* txanpon idazkunaren analisi linguistikoa agertuko litzateke, kontsideratzen badugu izenean eman den etorki ezberdinetako nahasketa, hots, ez indoeuroparra den *Calagurri* leku izenaren eta *-koś* zeltiberiar atzizkiaren artekoa, errealitatean eman zen prozesuaren isla dela. Baina lekukoen kronologiari, erromatar garaian Calagurris-en ageri diren izen propioei eta abelzaintzaren munduan lurralde ezberdinen artean ematen diren harremanei begiratzen badiegu, pentsa daiteke baita ere Ebro ibaiaren hegoaldean bizi zen euskal populazioa ibaiaren bestekaldetik Inperioaren lehen mendean etorritakoa zela. Bigarren hipotesi ahul honetan ere behar beharrezkoa da onartzea euskara Ebro aldean egiten ziren hizkuntzetarik bat zela.

## 4. BESTE HIZKUNTZAK

### 4.1. Galiako hizkuntzak

Antzinateko dokumentazioaren arabera, euskara zaharra ez zen Euskal lurraldeetan egiten zen hizkuntza bakarra. Aztertu dugun euskal onomastikaren ondoan, Akitanian galiar izen ugari ageri dira, Hispanian iberiar eta zeltiberiar jatorrikoak lekukotzen diren bezala. Sailkapen linguistikoak ez badira beti nahiko genukeen bezain argiak, hizkuntzen arteko mugak ere askotan nahasiak agertzen zaizkigu. Galiar testuen zabalguneari dagokionez, momentuz ez da testu bakar bat ere Garonatik hegoaldera aurkitu. Alderantziz, esan daiteke Vielle-Toulouseko idazkunek iberieraren presentzia lekukotzen dutela Tolosa aldean K.a. II. menderako, nahiz eta segurutzat jo iberiera ez zela bertoko hizkuntza indigena, Mediterraneo aldeko ardo merkatariek salerosketetarako erabiltzen zuten hizkuntza baizik. Baina Akitaniako latindar epigrafeetako izen askok galiar etorki garbia erakusten dute, hala nola, *Belisamae* (dat. jainkosa, St.-Lizier, Ariège), *Casidanni* (gen. Saint-Cizy, Cazères, H.P.), *Cintugnati* (gen. Arnesp, Valentine, H.G.), *Dannorigis* (gen. Saint-Lizier, Ariège), *Dunomagius* (Saint-Lizier, Ariège), *Eppamaigi* (gen. Saint-Bertrand-de-Comminges, H.G.), *Solimati* (gen. Gimont, Gers), *Solimari* (gen. Saint-

Lizier, Ariège) edo *Toutannorigis* (gen. St.-Lizier) izen elkartuak. Oso arruntak dira izen horietan aurkitzen diren osagaiak: *cintu-* 'lehen', *gnato-* 'jaio', *maro-* 'handi', *ep(p)o-* 'zaldi', *danno-* agian 'epaile' edo beste tituluren bat, *donno-* 'noble', *magio-* 'handi' edo 'solo', *touta-* 'herri', *rig-* 'errege'. Izen sinple eta eratorrien artean ondoko hauek aipa daitezke: *Aconi* (gen. Chiragan, H.G.), *Camuli* (gen. Lectoure, Gers), *Cassilli* (gen. Martres-Tolosane, H.G.), *Congi* (gen. Bramevaque, Barousse, H.P.), *Dannoni* (gen. Prat, Ariège), *Dannonia* (Ardiège, H.G.), *Donni* (gen. Saint-Lizier, Ariège), *Litano* (dat. Valentine, H.G.), *Sintus* (Saint-Béat, H.G.), *Trocci* (gen. Saint Girons, Ariège), *Venusius*, *Vinusius* (Gers). Galiar osagai arruntak dira, besteak beste, *camulo-* 'serbitzari', *danno-* 'arduradun', *donno-* 'noble', *litano-* 'zabal', *sentu-* 'bide', *trougo-* 'gaixo', *veni-* 'familia'.

Batzuetan izenek galiar itxura nabaria dute, baina grafiaren aldetik edo osagaien formen aldetik ezaugarri bereziak erakusten dituzte beste lekuetako galiar izenekin alderatzean; goian aipatutako *Duno-magius*-en ondoan *Dunohorigis* (gen.) dago, lehenengo begirada batean oso arrunta den *Du(m)norix* galiar izenaren aldaera gisa har daitekeena. *Dunoho-* osagaiak duen itxura, ordea, akitanieraren eraginari zor zaion zerbait da. Era berdinean azal daitezke galiar jatorrikoak izan arren akitaniar ezaugarriren bat erakusten duten zenbait izen: *Bersegi* (gen.) izenak, esaterako, jatorrizko /w/ semikontsonante ezpainkaria (**wer-sego-*) /b/ bihurtu du akitanierara egokitu denean. Etorki ezberdinetako osagai bana elkartuz osatzen diren izen hibrido edo nahasiak hizkuntza arteko harreman estuaren ondorio garbiak dira; halakoak ditugu *Belheio-rigis* edo *Attaio-rigis*, non bigarren osagaia galiar *rix* 'errege' hitz ezagun eta arrunta den.

Galiar ondareko izenek zabalgune handia dute Akitanian, onomastika indigena lekukotu den eremu guztietan agertzen direlarik; hala ere, esan daiteke izen garbienak lurraldearen ekialdean, hots, Consorannotarren hirian, eta Gaskoiniako lautadan lekukotzen direla.

Pertsona izenetan ez ezik jainko izenetan ere antzeman daiteke galiar eragina. Goian aipatutako *Belisama* Consorannotarren hirian aurkitutako epiteto galiar gardena da, «argitsuena» esan nahi duena, hain zuzen. Badirudi Convenatarren zenbait tokitan gurtua izan zen *Abel*(*l*)*ion*(*n*) jainkoa indoeuropar hizkuntzetan 'sagar' esan nahi duen **abello*-tik eratorri dela. *Carpento* (dat.) jainko izenak ere zelta lexikoian du bere etorkia, azaleko itxurari dagokionean latinezko *carpentum* 'gurdi'-tik zeltazko *carbanto*-tik baino hurbilago egon arren. Pertsona izenetan gertatzen den bezala, askotan jainko izenek ere ez dute etimologia garbirik, hala nola *Erge*, *Erriappo* edo *Ageio*, baina batzuk beren ezaugarriengatik akitaniar esparruan sar daitezkeen moduan beste batzuk hobeto eskontzen dira galiar fonologian espero daitekeenarekin, hots, /p/ fonema eta trabari gehi ixurkariz osaturiko multzoak dituztenak: *Exprecennio*, *Arpennino*, *Oidrito*, *Erriappo* bera. Beste batzuek, aldiz, pasamoduko zelta etimologia izan arren garapen fonetiko arraro samarrak

jasan dituzte, *Suhugio* Marteren epitetoaren kasuan gertatzen den bezala: forma horren aldaera arruntagoa den *Sutugio* zeltazko **su-* 'ona, ondo' + **(s)tug-* 'bultza' aditz errotik sortutakoa izan daiteke, baina lehenengo aldaeraren aspirazioak ez du galiar fonologian azalbide errazik. Ak. *Aher-* eusk. *aker*-en aldaera bada, pentsa al daiteke kasu honetan ere akitanieraren eraginez bigarren silabako trabariak aspirazio bortitza bereganatu duela?

Han hemenka ikusten den hizkuntz nahasketak aditzera ematen du Akitanian hitz egiten ziren akitaniera eta galiera bata bestearen ondoan eta elkarri eraginez bizi zirela, batez ere ekialdeko zatian. Inskripzio batzuek hizkuntza tradizio ezberdina familiaren beraren barruan erakusten dute: Arnesp-eko epigrafe batetan irakur daitekeenez aita galiar izenekoa dugu (*Cintugnatus*), ama akitaniarra (*Edunxe*) eta semea latindar izenekoa (*Titullus*) diren bitartean. Saint-Girons-eko beste batetan joera berdina ikusten dugu: bikote bateko gizona (*Rufus Sembexonis f.*) akitaniar leinukoa da aitaren izenak aditzera ematen duenez, haren andrea (*Pussilla Trocci f.)* galiar jatorrikoa den bezala, arrazoi berberagatik. Bikotearen semeen izenak, eurenak bezalaxe, latindar hutsak dira (*Rufinus Rufi f.* eta *Primulus Rufi f.*), latinaren aurrean hizkuntza indigenek pairatu zuten gainbeherakada edo galera modu argi batean adieraziz (Gorrotxategi 2011b).

### 4.2. Hispaniako hizkuntzak: zeltiberiera eta iberiera

Hizkuntza paleohispaniarretan idatziriko lekukoen arabera, Erdi Aroan euskaldun ageri den Belorado aldea eta Ebro ibaitik gertu dagoen Viana zeltiberieraren esparrukoak ziren, toki horietako abegi oneko idazkunek probatzen duten bezala. Izen propioak ere bat datoz sailkapen honekin. Nafarroa eta Pirinioetako lurraldetan aurkitu diren idazkunei buruz hitz egin dugu gorago. Aztertu ditugu baita ere euskal lurretan orokorrean euskara zahartzat har daitezkeen izen propioak. Orain beste hizkuntzei, hots, zeltiberierari eta iberierari, bereizten diegun izen propioak aztertuko ditugu (ik. De Hoz 1981).

Gorago aurreratu bezala, latindar epigrafia ez da euskal hiru probintzietan era berdinean lekukotzen, Araba beste bi lurraldeak baino askoz ere aberatsagoa delarik. Iruña Okan kokatzen zen *Veleia* karistiarren hiriburuan, arabar lautadaren ekialdean eta Nafarroako Lizarraldera begira dauden lurraldetan agertu diren epigrafeetan lekokutzen diren izen indigenak, kasu bakan batzuk salbu, zeltiberieraren geruzakoak dira. Hona hemen usuenak: *Ablonius*, *Ambatus*, *-a*, *Aunia*, *Boutia*, *Reburrus*, *Segilus*, *Segontius*, *Tritaius*, *Turesicus*, etab.

Nafarroako Lizarraldean ere, Gomez Morenok aspaldi ikusi zuen bezala, oso normalak dira zeltiberiera ondareko pertsona izenak: *Ambatus*, *-a*, *Araica*, *Arquio*, *Aunia*, *Boutia*, *Buturra*, *Coema*, *Doiterus*, *Doitena*, *Segontius*, *Viriatus*, etab. Hauetako gehienak Araban agertu diren antzekoak badira ere, batzuk aldiz Lusitaniakoekin alderatzen dira egokien.

Pertsona izenez gain leku izenak ere kontuan hartzen baditugu, argienak zeltiberierazkoak dira, batez ere karistiar eta barduliarren barnekaldekoak, hala nola *Deobriga* (Arce Mirapérez), *Veleia* (Iruña-Oka), *Suestatium* (Arkaia), *Tullica*, *Tullonium* (Alegria-Dulantzi), *Segontia*, *Gabalaeca*.

Datu guzti hauen arabera, argi da Euskal Herriaren mendebaldea zelta hizkuntzen esparrua bihurtu zela antzinatean. Ondorio honek euskararen jatorriaren inguruan polemika handia sortarazi du. Batzuek uste izan dute Erdi Aroko inbasioei esker euskaldundu zela lehenengo aldiz, jende berriaren abiapuntua Baskoien lurraldean jarriz eta *vascongado* hitza 'euskaratu' edo 'euskaldundu' gisa ulertuz. Azken urteotan inbasioen abiapuntua Akitanian jarri da, ideiaren alde frankoen kulturarekin lotzen diren Aldaieta eta beste zenbait tokitako aurkikuntzak aipatuz. Gauza ezaguna da Antzinaro berantiarrean eta Erdi Aroko lehen mendeetan, hots v. mendetik vii.era bitartean, giza mugimentuak egon zirela testuinguru politiko aldakor batean, baina frankoen iturrien arabera (Tours-eko Gergorioren *Historia Francorum*, batez ere), Akitania Wasconia bihurtu zen garai hortan Pirinioetatik abiatu ziren Baskoiei esker eta ez alderantziz. Ematen du Euskal Herriaren hainbat alderdik, hegoaldekoek zein iparraldekoek, mendebaldekoek nahiz ekialdekoek, ordura arte aldameneko kultura edo hizkuntza arrotzekin izan zituzten harreman estuak hautsi edo galdu egin zituztela, elkarrenganako hartuemanak sendotuz. Antzinaroko egoera politikoa eta linguistikoa guztiz aldatu zen, inguruko hizkuntza guztiak, euskara izan ezik, galdu egin zirelako latinaren faboretan. Ez da gauza erraza asmatzea nola eman zen iraultza hau eta nola atera zen lehia honetan euskara garaile, lekukoen arabera beste hizkuntzak baino askoz ere indar gutxiago izanik eta bereak propio zituen lurraldeetan ere kanpotar hizkuntzen arrastoak hain ugariak izanik. Mitxelenak misterioa azaltze aldera egin zuen gogoetaren arabera, badirudi euskarak bere izaera 'rezesiboa' —hau da, elebitasun egoeran ezkutuan mantentzeko izan duen joera— galdu gabe indartu egin zela Inperioaren administrazioaren presioa ezabatu zenean (Mitxelena 1981a). Honek, dena dela, ez du azaltzen zergatik beste hizkuntzek egoera berdinetan ez zuten bide berbera jarraitu, kontuan izanik zeltiberierazko zein galierazko lekukoak euskarazkoak baino sendoagoak direla. Lekukoak lekuko, euskara tamainaren aldetik esanguratsu izan behar zuen populazio baten hizkuntza arrunt gisa bizitasunez beterik heldu zen Erdi Aroko atarira. Eta honen zantzuak, urriak izanda ere, dokumentazioan antzeman daitezke.

### 4.3. Euskara zaharraren iraupena

Narbonaldean iberiar testuekin ez ezik iberiar ondareko izenekin ere gertatu zenaren aldean —hots, Inperioaren hasieran batbatean desagertu egin zirela galiar izenen mesedetan—, akitaniar izenek iraunkortasun bizia erakusten dute antzinate osoan.

Galieraren eragina eta presioa jasan arren, ez zuten lehia horretan atzera egin. Martres-Tolosane-ko epigrafe batek (*Annius Dunohoxsis f. Calva Cassilli f. uxor Andere filia*) erakusten du nola gurasoek, bere izenak latindarrak izan arren eta familian galiar tradizioko izenak ere agertu arren, alabari izen akitaniar garbia jarri zioten. Caubous-eko harri baten arabera, *Condannossus* galiar izeneko batek alaba *Anderexo* deitu zuen, eta Saint-Bertrand-de-Comminges-ko beste batean ikusi daitekeenez, *Silex* izeneko emakume batek akitaniar izenak eman zizkien bere lau semeei (*Odox(us), Lohitton, Andosten* eta *Andossus*), bere aitaren izena galiar ondarekoa bazen ere (*Eppamaigi f.*).

Akitaniar onomastikaren iraunkortasuna Hagenbach-eko xaflek ere probatu egiten dute. Heldu zaizkigun 29 pertsonetarik 13k (hau da %45ak) bere izenak eta bere aitarenak adierazteko ez dute latindar izenik erabili. Gainera, galiarrak urriak dira, gehiengo nabaria akitaniarrek osatzen dutelarik. Ezin da seguru egon xafla hauen datazioaz, baina bi datu kontuan hartu behar dira: a) aurkikuntzaren testuinguruaren arabera 270. urtearen inguruan eman ziren germanoen razzien garaian kokatu behar dira (beraz hori da *terminus ante quem*), eta b) xafla guztiak hain homogeneoak dira estilo eta itxuraren aldetik, non zaila den pentsatzea urte askotako produkzioaren ekoizpena direnik. Orduan, honek esan nahi du, Saint-Bertrand-etik ez urrun III. mendearen erdialdean akitaniera indartsu bizi zela zilarrezko xaflak eskaintzeko gai zirenen artean (Gorrotxategi 2003).

Datazioari dagokion arazo honetan aipagarriak dira Pirinioetako zenbait mendixka tontorretan kokatzen ziren santutegietan aurkitu diren aldareak, horietako asko indusketa arkeologikoen bitartez ezagutu direlako. Aldare gehienak tamaina txikikoak eta anepigrafikoak dira, hots, idazkunik gabekoak: Lugdunum-eko hiriburutik gertu dagoen Coume de Lias-eko santutegian 19 aldaretarik soilik 6 dira idatziak, baina mendebalderagoko Coume d'Arés-eko santutegian 33 aldaretarik bakarrik batek daramazki jainkoaren izena, *Ageio*, eta debotoarena, *Sembus*; Mont Sacon izeneko santutegian proportzioa are txikiagoa da, 55etik batek dituelako oraindik irakurrezinezko letra batzuk. Coume d'Arés-eko santutegiaren datazioa aztertzerakoan, agertu diren txanpon eta zeramika pusketen arabera, Schenck-David arkeologoak (2005) atera duen ondorioa zera da: santutegia III. mendean hasi eta V. mendera arte egon zela funzionamenduan. Santutegi hauek, beraz, Inperioko azken bi mendeetako jende xumearen ohitura erlijiosoak adierazten dituzte: bertoko jainkoei aldareak eskaintzen dien arren gehienak ez dakite idazten; heldu zaigun izen bakarra *Sembus* akitaniarra da, dena den. Hiru santutegi hauen antza zuen laugarren bat Montsérié-n zegoen. Zoritxarrez ez da inoiz ondo induskatua izan, horrek datazioaren arazorako suposatzen duen desabantaila handia delarik, baina beste hiruren aldean askoz ere epigrafe gehiago eman du, anepigrafoen kopurua handia izanik ere. Aldareak eskaini dituzten pertsona

gehienak ez dira erromatar hiritarrak, akitaniar izenak daramazkiten *peregrinoak* baizik, korpus guztian galiar izenak daramazkitenak soilik bi direlarik. Kronologiaren aldetik Montsérié-ko aldareak beste hiru santutegietakoak bezalakoak balira, hau da II.-III. mendetik V. era bitartekoak, akitanieraren bizitasunaren proba adierazgarria emango lukete (Gorrotxategi 2010).

Hispaniako izen indigenen kronologiari buruz ezin da zehaztasun handirik eman. Badirudi izen iberiarrak, Narbonaldean gertatu zen bezala, nahiko azkar desagertu zirela latindar epigrafiatik, latinezko izenen mesedetan. Zeltiberiar izenak, aldiz, arruntak ziren lehenengo bi edo hiru mendeetan, euskal jatorriko izenak ziren bezala (ik. Untermann *MLH*). Dena dela, interesgarria da gure helbururako euskal lurraldeetan zeltiberierazko onomastikak dituen ezaugarriak aztertzea. Bi datu dira aipagarri. Esan den bezala, Arabako izen indigena ia guztiak zeltak izan arren, izen horiek daramazkiten pertsonek ez zuten adierazten zeltiberiarrengan oso normala zen familia izena. Hau da, Zeltiberia osoan ez ezik Astur eta Kantabroen artean ere familia izenak adierazten zuen, beste edozerk baino garbiago, pertsona baten jatorri zeltiberiarra. Araba eta Lizarraldeko zelta izeneko pertsonek zeltiberiar onomastikaren ezaugarri nabari hau falta dute.

Goian aipatu ditugun izenen arabera, Lizarraldean euskal leinukoak zein zeltiberiar ondareko izenak aurkitu dira. Lurralde nahasia zen, beraz. Baina Akitanian ez bezala, non etorki ezberdinetako pertsona izenak eta jainko izenak nahasirik ageri diren, Lizarraldean pertsona izenak zeltiberiar ondarekoak dira jainko izenak euskal geruzakoak diren bitartean. Datu berriren batek banaketa garbi hau lausotu dezakeela ahaztu gabe, pentsa daiteke banaketaren arrazoia multzo bakoitzaren garapen kronologikoan datzala: uste badugu pertsona izenak gizartearen sinismenekin lotzen diren jainko izenak baino aldakorragoak direla, pentsa dezakegu edo gizarteak bere sinismenak eta jainko izen tradizionalak mantentzen zituen bitartean onomastika pertsonalari zegokionean inguruko zeltiberiarrena bereganatu zuela familia izena kanpoan utsiz edo kanpotik etorritako jende batzuek tokiko sinismenak bereganatu zituztela. Banaketak ez digu kronologia absolutoaz ezer esaten, baina aditzera ematen du geruza bat, euskal jainkoena, alegia, bestea baino zaharragoa dela lurralde horretan.

## 5. TOPONIMOAK

Inork arbuiatzen ez duen gauza jakina da toponimoek edo leku izenek, denbora luzean irauteko duten gaitasunagatik, historiaurrean argia egiteko duten balioa; betidanik izan dira erabiliak Hispaniako hizkuntza egoera zaharra argitzeko, Poza lizenziatua edo Humboldtengandik hasi eta gaur egun arte. Aldi berean, baina, pertsona izenen azterketan

aipatu arrisku eta ahulezia guztiak dituzte bere baitan. Azken hauek baino indar gehiago dute aurrehistorian atzera egiteko, baina bestalde zeharkako tradizio batetik jasoak dira, oso gutxi baitira antzinateko inskripzioetan agertzen diren leku izenak, eta normalean banakakoak dira beste izenekin batera sare esturik osatu gabe agertzen direlarik. Haatik eskaintzen diguten ikuspegia pertsona izenetik ateratzen dena baino askoz ere lausoagoa da, kronologia ezberdineko faseen isla izan daitekeenagatik ez bada ere.

Hala ere gure eskualdeko leku izen batzuk antzinatean bertan edo inguruan hitz egiten ziren hizkuntza ezagun batzuekin lot daitezke. Akitanian iberiar mundura garamatzate antzinatean dokumentatutako *Elimberris Auscorum* (Auch), *Calagorris* (St. Martory), *Iluro* (Oloron) edo beranduagoko Lourdes (< **Ilur-da*, *Ilerda*-ren aldaera) edo Lombes leku izenek. Baskoien lurraldean familia bereko izenak lekukotzen dira, *Calagurri* (Calahorra), *Iluberritani* (Eriberri), edo *Pompaelo* bera. Asko idatzi da leku izen hauen jatorriaz, iber. **ilti-/iltu-* eta eusk. *hiri* bata bestearekin parekatuz, baina beren arteko erlazioa ez da batere garbia, euskarazko hitzak duen aspirazioa eta suposatzen duen bokalarteko /l/ lenis-a ez datozelako bat iberierazko formarekin. Bien arteko erlazioa onartzen ez badugu ere, aipatu leku izenek iberieraren eragina Akitanian eta Baskoien lurraldean probatzen dute.

Galiar jatorriko leku izenak ere lekukotzen dira Akitanian. Deigarria da Convenatarren hiriburua *Lugdunum* deitzea, kontuan badugu eskualde hori dela hain zuzen akitaniar jatorriko pertsona izen kopuru handiena eman duena. Ez dakigu, baina, izena galiarrek ipinitakoa edo eromatarrek probintzien antolaketan hartutako erabaki bat izan zen, Akitania hegoaldean ere Errodanoaren ondoan zegoen Galietako hiriburuaren ordaina egon zedin. Azalbide honek ez du gutxiesten, hala ere, galiar toponimoen presentzia. Oso garbia da *Pinpedunni* 'bost gotorleku', Akitaniaren mendebaldean kokatzen zena, edo *Boii* populu izena (Buch), Galietako beste tokitan ere lekukotzen zena.

Euskal Herriko mendebaldean ugariak dira zelta jatorriko toponimoak, garbienak *Tritium*, *Tullica*, *Tullonium*, *Segontia Paramica* karistiar eta barduliarren hiriak edo *Nerva* eta *Deva* ibai izenak direlarik. Etorki berdinekoak edo gutxienez indoeuroparrak dira ondoko hauek ere: *Suestation* (Arkaia), *Veleia* (Iruña Oka).

Izen garbi hauetatik kanpo, gainerakoei askotariko azalbideak eman zaizkie, gehienetan erabateko iritzi bat lortu gabe. Adibide bat jartze arren, askok pentsatu izan dute *Tarbelli* populu izena galiar jatorrikoa dela, gal. *tarvo-* 'zezen' hitzetik eratorria, baina akitaniar ondareko osagaiak, hots, *tar-* erroa *Tarros* antzeko leku izenean lekukotzen dena edo *-bel* ezaguna, ezin ditugu baztertu, hurbileko *Tarba* leku izena (Tarbes) kontuan hartu nahi ez badugu ere. Beste horrenbeste gertatzen da mugaz honuntzako hainbat leku izenekin. Tolomeorengandik soilik ezaguna den *Bituris* Baskoien hiriak *Bituriges* galiar tribu izenaren antz handia du, geografo berak jaso zuen *Nemanturista* edo *Nemanturissa*

Baskoien toponimoak galiar pertsona izenetan maiz lekukotzen den *nemanto-* 'etsai' gogoratzen duen bezala. Baina azaleko antza besterik ez duen erkaketa baten aurrean egon gaitezke, azkeneko izenak eskualde berean dokumentatzen den *Iturissa* izenarekin duen erlazioa kontuan hartzen badugu, aspalditik euskarazko *iturri* hitzarekin lotu izan den leku izena.

Orokorrean toponimo bakanak, oso garbiak ez direnean, modu askotara azal daitezke, azalbidearen kontrola gure eskuetatik kanpo gelditzen delarik.

Ondorio fidagarriagoak atera daitezke, agian, kopuruaren aldetik serie aberatsagoak osatzen dituzten toponimoetatik. Hauen artean, bi serie nabarmentzen dira gure eskualdean: bata, antzinatean lekukotzen ziren *-ates* tribu izenak, bestea, Erdi Arotik honuntza dokumentatutako *-òs* / *-ués* / *-otz*(*e*) atzizkiaz osaturiko leku izenak.

Lehenengoari dagokionean, aditu guztiak bat datoz haren jatorria galiarra dela aitortzean, *Nantuates* leinu izen ezagunean ikus daitekeenez: *nantu* 'haran' + *-ates*, 'haraneko biztanleak, harandarrak' esan nahia duena. Atzizkiaren jatorria galiarra izanik, deigarria da lekuko gehienak hegoaldeko Akitaniatik datozela ikustea. Iturri klasikoek aipatzen dituzten 30 herri izen inguruen artean erdiek atzizki hau daramate (Duval 1975): oso ezagun ziren *Lactorates*, *Sotiates* bezalakoetatik hasi eta ilunago ziren *Sybillates*, *Cocosates* bezalakoetara. Gainera ez dira Akitaniako ekialdean soilik lekukotzen, ezen Zesarrek aipatzen dituen *Sybillates* horiek zuberotarrak baitira. Izen guztiak iturri klasikoetako galbahetik pasatakoak direnez gero, pentsa zitekeen galiarrek ezarritako izenak edo izendatzeko ohitura izan zitekeela, gero erromatarrek bereganu egin zutena, hau da, azken finean exonomoak direla. Baina, duela gutxi Saint-Lary-tik gertu, inskripzio batean agertu dira atzizki hontaz eratutako bi herri izen: *Harexuates* eta *Neouates*. Interesatzen zaiguna lehena da, ezen itxura denez akitanierazko *harexu* baten gainean moldatua baitago, agian euskarazko *haritz* / *haretz* hitzetik *-zu* atzizkiaren bidez azal daitekeena. Lekuko honek erakusten digu *-ates* atzizkia bizirik zegoela akitanieraz eta ez zela bakarrik erromatar historiagile edo geografo eruditoek bertako populu indigenak aipatzeko zuten ohitura. Dena den, atzizkiak ez du gerora arrastorik utzi.

Bestelako problemak sortzen dituzte *-òs* / *-ués* / *-otz*(*e*) atzizkiaz osaturiko leku izenek, ezen beren hedadura eta dentsitateari esker akitanieraren esparruaren adierazle gisa kontsideratuak izan badira ere, deigarria da antzinatean serie honetako leku izenik ez izatea. Aipa daitekeen kasu bakarra *Itinerarium Antonini* izeneko iturri berantiarrean agertzen da, *Boios*, hain zuzen, beste iturrietan *Boiates* dena. Onartzen badugu **boio-* zelta errotik datozela biak, azkenengoan zelta deribatu tipiko bat izango genuke eta bestean haren akitanierazko ordaina.

Rohlfs (1952, 1970) konturatu zen toponimo hauen oinarri gisa sarritan pertsona izenak zeudela, eta askori aztarna aurkitzeko gai izan zen. Batzuek akitanierazko erroak

erakusten zuten, baina beste askotan latin izenak ere antzeman zitezkeen (adibidez, *Valerius*-etik eratorria den *Baliròs*, *Laurus*-etik *Lauròs*, *Vitalis*-etik *Vidalòs,* etab.). Azken datu honi gehitzen badiogu mota honetako toponimoek erakusten duten zabalgunea eta bizitasuna, pentsatzekoa da erromatarren garaian eta beranduago ere indarrean egon zela eraketa mota hau. Orduan galdetzekoa da mapa batean kokatu egiten ditugun toponimo guztiek erromatarren aurreko egoera ordezkatzen ote duten edo agian ordutik hasi eta denbora luze batez garatzen joan den esparru baten seinale ez ote diren. Galierazko *-acum* atzizkiarekin gertatutakoa gogoan izanik, hau da, latinera pasatu eta bertan errotu ondoren ezagutu zuela benetako hazkundea, pentsa daiteke antzeko gauza gertatu zitzaiola akitanierazko *-otz* atzizkiari ere. Etimologiak bestalde problemak ditu, ezbaita euskaraz bizirik halako atzizkirik, akitanieraz goian ikusi bezala *-oss-* itxurazko atzizkiren bat agertu arren. Horregatik batzuk, aipatu zailtasunak nahiz lekukotasunaren bizitasun berantiarra kontuan hartuz, jatorria latinean aurkitzen saiatu dira: lat. *-ōsus* atzizkian Villarrek (2005) edo pertsona izenen genitibozko forman Salaberrik (2011b). Lehen proposamena gaindi ezinezko bi oztoporen aurrean aurkitzen da: latinezko atzizkia normalean izen arruntei atxikitzen zaiela ugaritasuna adierazteko eta ez pertsona izen propioei eta, bigarren, atzizkiaren /o/ luzeak ez lukeela inoiz gaskoieraz *-òs* bokal irekia eta aragoieraz *-ués* diptongoa emango. Salaberriren proposamenak toponimo batzuk azal ditzazke, *Berakotz*, *Berakoitz* txandaketa erakusten dutenak batez ere, **Belasconis* forma batera jatorria eramanaz. Baina honek ez ditu toponimo gehienak azaltzen, ezen *Cicero, -onis* moldeko deklinabidean sudurkariaren aurreko /o/ bokala luzea zen (*-ōnis*), euskaraz arazorik gabe *-oitz* emango zuena, baina aldameneko erromantzeetan bokal itxia eman behar zuena, ez irekia.

Bestalde, zabalguneari dagokionean, nabarmentzekoa da mota honetako toponimoak ez direla hiru probintzietan dokumentatzen. Badirudi Leizarango bailaratik mendebalera erabat ezezagunak edo oso urriak direla. Gainera Leizarango harana gauza bat baino gehiagorako izan zen muga. Burdin Aroko arkeologiak erakusten digunez, Pirinioetako lepogainetan oso ugari diren kromlech edo harrespilak Leizaran ibaiaren eta Andorra inguruaren bitartean aurki daitezke bakarrik (Peñalver 2001, 2004). Pirinioetako katemendiaren luzerari erreparatzen badiogu soilik, azpimarratzekoa da *-os* toponimoen eta harrespila mota honen zabalgunea berbera izatea. Aran edo Andorratik ekialdera iberieraren munduan gaude. Leizarango haranetik mendebaldera, beste batean ote? Euskalduntze berantiarraren hipotesiaren aldekoek uste dute akitanierak ez zuela antzinatean Leizarango mugaz mendebaldera igarotzen.

Aipatu antzekotasuna handia izanik, ez da ahaztu behar harrespilak soil soilik goimendiko larre eta lepoetan aurkitzen direla, 500-600 metrotik gora, toponimoak Akitania osoan gehi Nafarroako eta Aragoiko eremu zabaletan aurkitzen diren bitartean.

Zabalgunea ez da, beraz, erabat berdina. Besterik, harrespilen mendebaleko muga Burdin Aroan kokatu baldin badaiteke, ez dakigu zehatz mehatz noizkoak diren *-os* toponimoak, baina badirudi proportzio handi batean bederen Erdi Arokoak direla. Bakarrik erromatarren aurrekoak balira guztiak, hau da Burdin Arokoak, edukiko luke zentzua bi motako datuak lotzeak (Gorrotxategi 2011a).

Euskara zaharraren aldetik ongi azal daitezkeen toponimoak oso gutxi dira, beraz. Hauen artean, *Oiasso* izan daiteke garbiena, gehienek uste izan duten bezala, gaur eguneko Oiartzunen aipamen zaharra baldin bada. Antzinateko lekukoek duten zailtasunaren adibide gisa, esan behar da toponimoak beste aldaera batzuk ere bazituela. *Oiasso* (Οἰασσώ) Tolomeok dakarrena da, Estrabonen obran *Oidassu*(*n*) (Οἰδασοῦνα πόλιν) eta Pliniorenean *Olarso* eta *litus Olarsonis* agertzen diren bitartean. Oso interesgarria da Pliniok (4.110) dakarren aipua, ezen glosa baten antzera uler baitaiteke: Kantauri itsasoaren deskribapena hasten duenean Galiatik Hispaniara sartzean, halaxe esaten digu: *a Pyrenaeo per Oceanum Vasconum saltus, Olarso, Vardulorum oppida, Morigi, Menosca, Vesperies…,* hau da, «Pirinioetatik (hasita) Itsasoaren ondotik Baskoien Oihana, Olarso, (gero) Barduliarren hiriak, Morigi, Menosca (eta) Vesperies…», non *Olarso* «Vasconum saltus»-en itzulpen gisa uler daitekeen.

## 6. INGURUKO HIZKUNTZEN ERAGINA

### 6.1. Iberiera eta hizkuntza zeltak

Esandako guztiaren arabera, garbi da euskara zaharrak hizkuntza zeltak, iberiera eta latina izan zituela auzoko. Hiruretarik latinaren eragina da ongien nabaritzen dena hizkuntzaren baitan. Iberieraren arrastoa oso zaila da segitzen, izen propio bakanen batzuetan salbu, ez baitugu hizkuntzaren ezaugarri nahiko ezagutzen. Luzaroan baskoiberismoaren froga sendotzat hartua izan zen ib. *gudua deisdea* orain beste modura irakurtzen da (*kutur oisor*), *gudu*-ren jatorria iberieratik urrunduz. Azaleko antza besterik ez dute 'diru' edo antzeko adiera duen ib. *śalir*-ek eta eusk. *zil*(*h*)*ar*-ek, zeltiberierazko *silabur*-ekin ere erkatu daitekeena; berdin hilarrietako *seltar* eta eusk. *zeldor*. Harridura gehiago sortzen du Andeloko mosaikoan ageri den *ekien* formak, mota horietako idazkunetan ohikoa zenez, artisauaren sinadura adierazten baldin bazuen, non 'egin' aditzaren agerpena normaltzat hartu behar den. Azken urteotan ikerle barzuk iberierazko zenbatzaileen sisteman euskararenaren parekotasun ugari ikusi dute, mailegu orokor baten bidez, edo agian hobeto, jatorri berdineko direla esanez azaldu nahi izan dituztenak; baina erkaketak (Orduña 2005) alde batetik dudazkoak dira eta bestetik euskararen aldetik modu egoki batean azal daitezke (Lakarra 2010). Orokorrean, ikusirik bi hizkuntzen

fonema sistemek bazutela beren arteko antzekotasun tipologiko bat, ez erabatekoa, baina bai fonemen kopuruari eta silabaren egiturari zegokiena, ez da harritzeko azaleko antzekotasun asko aurkitzea, batez ere kontuan hartzen bada erkaketa kontrolatu edo mugatu dezakeen iberierazko hitzen esanahia ez dugula ezagutzen.

Zelta hizkuntzen eragina gehiago tratatua izan da, eta lexikoan antzeman daitezke zenbait mailegu, nahiz eta gehienak aldameneko erromantzietan ere lekukotuak izan. Honek pentsarazi egiten du agian maileguak ez zirela zuzenean galieratik edo Hispaniako zelta hizkuntzetatik sartu, latinaren bitartez baizik, hots, zelta hizkuntzatik latinera eta hemendik euskarara; halakoak izan daitezke *gona*, *kai*, *landa*, *gereta*, *izoki*(*n*), *aran* (fruitua). Hitz bukaeran pixka bat ezberdina izan arren, eusk. *gezi* lat. *gaesus* /geso/-tik hurbilago dago, galierazko *gaiso*-tik baino. Eusk. *gori*-k badu erromantzean ordainik, espainolezko *huero* 'txitarik ematen ez duen arrautza' esate baterako, baina zelta esan nahitik askoz ere hurbilago mantendu da. Badirudi eusk. *muga* eta Pirinioetako erromantzetan itxuraz zein esanaiaz haren ordainak izan daitezkeen zenbait forma (*bòga*, *buega*, *muga*, *buga*, etab.) galiar etorkikoak izan daitezkeela, *mrogi*- / *brogi*- 'muga' hitzarekin duten antza kontuan hartzen bada. Badirudi eusk. *maite* zelta hizkuntzetako *mati*- 'ona' izenlagun arruntarekin lot daitekeela, erromantzean ondoriorik utzi ez duena. Beste hitz batzuei ere zelta jatorria bilatu nahi izan zaie, baina ez da gauza garbia; hala, *adar*, *andere*, *hartz*, *argi*, etab. Kasu batzuetan, ordea, eman diren azalbideak ez dira zuzenak, eusk. *hogei* galesezko *ugeint* eta bretoierazko *ugent* formekin erkatu denean, esaterako (Tovar 1959), hogeika zenbatze sistemaren jatorria hizkuntza zeltetan zegoelakoan, egia ez dena; aipatu zelta forma horiek **wikanti* protoforma eskatzen dute.

### 6.2. Latina

K.a. II. mendearen hasieran erromatarrak baskoien lurraldera inguratu zirenetik latina beti egon da euskararen alboan, hasieran hizkuntz arrotz gisa, auzoko hizkuntzekin zituen harremanetatik kanpo gelditzen zena, baina azkenean bertoko jende askoren ama hizkuntza bihurtu zena. Latina zibilizazio hizkuntza zen eta denbora pasa ahala funtsio hori indartuz joan zen. Latinez edozer gauza idatz zitekeen, karta xume edo epigrafe sinpleak nahiz goren mailako idazki landuak. Gainera agintea latinez mintzatzen zen. Ez da batere harritzekoa, bada, baldintza hauetan euskarak latinetik ehundaka hitz mailegatu izana, eguneroko bizitzari zein gizartearen eraketari dagozkienak adierazteko. Nekazaritzan, abelzaintzan, zuhaitz eta landare izenetan erruz lekukotzen dira, askotan espezie edo teknika berrien adierazle direla: aurkikuntza arkeologikoen arabera, euskaldunek lehenagotik ere goldea ezagutzen zuten, baina eromatarrek ekarri zutenak zaharraren aldean abantail asko zituelako, tresna ez ezik hitza ere mailegatu

zuten (lat. *culter* > *golde*). Antzeko gauza gertatu zen garia ehotzeko erabiltzen zen tresna adierazteko: euskarak bazuen jatorrizko hitz bat, *eihera*, eskuarekin harri biribil bat beste baten kontra igurtziz garia ehotzeko erabiltzen zena, baina erromatarrek erabiltzen zituzten animalien edo uraren indarrez mugitutako harri handiei ez zitzaien izen zaharra esleitu, latinezko *molina* (> *bolu* edo *borin*) edo *rota* (> *errota*) baizik. Lexikoaren zenbait alorretan banaketa moduko bat antzeman daiteke: hala, baserriko animali gehienek euskal jatorriko hitza duten bitartean (*behi*, *zaldi*, *ardi*, *zezen*, *behor*, *ahari*, *asto*, etab.), ukuiluko hegaztiek latinezkoa dute (*oilo*, *ahate*, *oiloloka*, *antzare*). Antolakuntzarekin zerikusirik dutenak latin jatorrikoak dira askotan: *korta* (lat. cohorte), *ukuilu*, *ikuilu* (lat. locellu), *an*(*h*)*oa*, *anhúa* (zub.) (lat. annona). Zuhaitz izenen artean, maileguak dira *gaztaina* (lat. castanea), *biku* (lat. ficu), *gerezi* (lat. ceresea), *muxika* (lat. pessica) eta barazkien artean: *baba* (lat. faba), *leka* (lat. theca), *tipula*, *biper* (< lat. piper). Erromatarren komerzioan garrantzi handia zuen olioarentzat hitz berria mailegatu zuten ardoarentzat jatorrizkoa erabiliz; hala ere, ardoaren ekoizpenarekin loturiko hitzak, *dolare* (lat. torculare), *busti* (lat. musteu) edo (*k*)*upel*(*a*) (lat. cupella) bezalakoak latindarrak dira.

Eten gabeko ukipen horretan hitz batzuk goiz sartu ziren euskararen altxor lexikoan, beste batzuk beranduagokoak direlarik. Hitzek berek duten eiteari esker jakin daiteke batzuetan mailegua goiztiarra edo berantiarra den. Argibidea gehienetan latinak ematen digu, hizkuntza honen historia oso ondo lekukotuta dagoelago, errepublikako lehen faseetatik erromantzeen jaiotza guneraino; euskarak, aldiz, lehen lekukoak hain berandukoak izanik, ez du laguntza handirik ematen mailegatzea noiz eman zen jakiteko, puntu honetan irlandesaren historiaren lehen mendeetan gertatutakoarekin antz gutxi erakutsiz (Mitxelena 1974).

Ukipenaren lehen fasean, Errepublika garaiko Ascoliko brontzeak erakusten duen bezala, latinak arazo asko izan zituen iberiar eta euskal izenak bere gramatikara egokitzeko, zeltiberierazko izenekin gertatzen ez zen bezala: ennegense baten izenak (*Beles Umarbeles f.*) erakusten duenez, idazleak ez du asmatu aitaren izena genitiboan jartzen. Berrehun urte beranduago, eten gabeko ukipenaren ondorioz, akitaniar izenak normalean latin gramatikara egokituak daude, goian ikusi den bezala, nahiz eta egokitzea ez den beti modu uniboko batean egin, horrek idazkien ulermenerako sortzen dituen arazoekin (ik. Lergako inskripzioa: *Ummesahar fi(lius) Narhungesi Abisunhari filio ann. XXV t. p. s. s.*, non ez dakigun Abisunhar Narhunges-en semea ala Ummesaharrena den). Gerora, euskaldunek latinera egokitutako forma batzuk berriro euskaraz erabili zituzten, *Enneconis* genitibo formatik datorren *Enekoitz* euskal izenak argi erakusten duen bezala.

Euskal lurraldeetako latindar inskripzioek latinaren beraren garapena adierazten dute zenbait kasutan: Sarasoko idazkun batean *Flavos* izenak nominatiboko *-uos* desinentzia du, artean *-uus* izatera pasatu ez zena, Augustoren garaikoa dela aditzera ematen. Asque-ko

aldare bateko eskaintza formulak (AE 1999, 1048: *votu solvet leves mereta*) argi erakusten du, aldiz, inperio garaian latinak jasan zuen zenbait aldaketa: akusatiboko azken *-m* galdu da, *votu*(*m*), *-ns-* multzoan sudurkaria galdu da (*leves libens* ordez, non *v* eta *b*-ren arteko nahasketa ere ageri den) eta hiru hitzek /e/ eta /i/ bokalen arteko nahasketa erakusten dute: *solvet leves mereta* = *solvit libens merito*. Gainera *mereta* forma *merito*-ren ordez erabili izanak aditzera ematen du idazleak jatorriz ezberdinak ziren bi formula nahastu zituela, *merito* eta *ob merita*, alegia. II.mendearen bukaerakoa edo III.medekoa izan daiteke, ordurako latinaren bokalen sistema klasikoa eromantzetan normala izango den sistemara aldatzen ari zelako; hau da, sistema klasikoko luze-labur oposaketa tinbre oposaketa bihurtzen ari zen; honek esan nahi du *i* laburra eta *ē* luzea batu egin zirela, /ẹ/ itxi baten ahoskera hartuz, eta aldi berean edo agian pixka bat beranduago *u* laburra eta *ō* luzea ere batu zirela /ọ/ itxi bat emanaz. Aldaketa hauek erromantze guztietan eman ziren, sardoan izan ezik, eta Inperio guztiko idazkunen arabera I. mendean hasi ziren arren ez ziren III. mendera arte orokortu.

Kontuan harturik euskarak beti egonkor mantendu zuela bost bokalez osaturiko sistema bokalikoa, maileguek bere egituran erakutsiko dute sistema klasikoaren ala latin arrunteko sistema berriaren adierazle diren. Hala, *moeta, bil(h)o, ohore* eta *lukuru* mailegu zaharrak dira, latinean aipatu aldaketak eman baino lehenagokoak, *monēta*(*m*), *pilu*(*m*), *honōre*(*m*) eta *lucru*(*m*) formak suposatzen baitituzte, espainolezko *moneda*, *pelo*, *honor* eta *logro* formek bokal nahasketaren ondorioak diren bitartean. Aldiz, *dome*(*e*)*ka*, *mezu*, *dorre* edo *honddo* hitzek ez dute latin klasikoko *dominica*, *missu*(*m*), *turri*(*m*) edo *fungu*(*m*) ahoskera islatzen, beranduagoko latin arruntaren edo erromantzearena baizik.

Latin klasikotik erromantzera bitartean kontsonante belareak palatalizatu ziren /j/ semikontsonante eta /i, e/ bokalen aurrean, esp. *cien* (< *centum*), *cerro* (< *cirrum*), *paz* (< *pacem*), *hielo* (< *gelum*), *yeso* (< *gypsum*) eta *ley* (< *legem*) hitzek erakusten duten bezala. Euskaraz mailegu batzuek ahoskera belare zaharra mantentzen dute, hitz hasieran normalean ahostuta agertzen bada ere: *Guendearia* leku izena (< centenariam), *kirru*, *bake*, *gisu* eta *lege* goian aipatu diren espainolezko ordainak. Adibide gehiago: *gela* < *cellam*, *gerthu* < *certum*, *angelu* (leku izenetan *Angelu*, Araba, edo *Ibarrangelua*) < *angellum*, *errege* < *regem*, etab. Beste batzuk, aldiz, ahoskera berriaren isla dira, beranduagoko maileguak direla agerian utziz. Hauen artean batzuk kristautasunarekin zerikusia duten hitzak dira, *zeru* bezala (**tselu* < **kelu* < lat. *caelum*), baina beste batzuk hitz arruntak dira, *deus* (< lat. genus), *galtzina* edo *detxema* bezala (ik. Mitxelena 1974).

Bokal arteko trabari ahoskabeak mantendu izan dira euskaraz, erromantze ia guztietan jasan duten ahosketaren arrastorik gabe, ondoko adibideek erakusten duten bezala: *Opaku* (lat. *opacum*, erromantzezko *Obago*-ren aldean), *bake* (lat. *pacem*), *bike* (lat. *picem*), *ahate* (lat. *anatem*), etab. Nabarmentzekoa da Pirinioetako zenbait erromantzek

mantendu egin dutela, euskarak bezala, bokal arteko trabari ahoskabea (*napina* 'arbi', ik. esp. *nabo*), euskal sustrato baten eraginez azaldua izan dena. *Getaria* (lat. caetariam 'arraintoki') bezalako izen batek, adibidez, mailegu goiztiarra izan behar du, ez dituelako aipatu bi aldaketak jasan: bokal arteko leherkari ahoskabearen ahostuntzea, hots, *-t-* > *-d-* bihurtzea (ik. gailegozko *cedeira*) eta hasierako belarearen palatalizazioa (*ke-* > *tse-* > *se-*). Aldaketa bi hauek, batez ere bigarrena, emanak zeuden bisigodoen garairako.

**Irakurgai osagarriak**

Andreu Pintado (arg.) 2009, Barruso & Lerma (arg.) 2006, Gorrotxategi 1984, 2009, 2011a, 2011b, De Hoz 1981, 1995, 2011, Larrañaga 2007, Mitxelena 1954a, 1961-62, 1964a, 1972, 1981a, Rohlfs 1970.

4.

# EUSKARA ERDI AROAN

Patxi Salaberri Zaratiegi

## SARRERA HISTORIKOA: KONKISTA ISLAMIKOTIK BEHE ERDI AROKO KRISIALDIRA ARTE (VIII.-XIV. MENDEAK)

(Juan José Larrea)

### 1. AL-ANDALUSEN NAGUSITASUNAREN GARAIA (714-1009)

Hispaniaren konkistak (711-714) denbora gutxian ahalbidetu zuen Estatu islamiko baten sorrera eta hau Penintsulako eragile politiko nagusia izan zen XI. mendearen hasierara arte. Kordobako emirerriak (756-929) eta kaliferriak (929-1031) periferiako arkitektura politiko kristauak sakonki baldintzatu zituzten. Konkistaren biharamunetik, euskal lurraldeetako agintariek erantzun ezberdinak eman zizkioten Hispaniako jabe berrien nagusitasunari. Mendebaldean, asturiarrekin elkartuta, arabarrek Asturiasko erreinuaren ekialdeko muga osatu zuten, Gaztelarekin batera. Iruñeak aldiz al-Andalusen menpeko protektoratua hautatu zuen.

Lehen belaunaldietan, arabar agintariek autonomia zabalaz jokatu zuten eta gainera eragin politikoa izan zuten Oviedoko gortean. Baina Araba konderri bezala testuetan agertzen hasi zenerako, IX. mendearen bigarren erdialdean, Gaztela gailentzen hasita zegoen. X. mendean, Kantauri eta Duero arteko Gaztela handia eratu zenean, Araba bertan integratu zen. 932tik aurrera, ezagutzen ditugun lehen konde arabarren leinua, Belatarrena, alboratua izan ondoren, Fernán González dugu kondea. De facto burujabea zen Gaztela honetan, Araba botereguneetatik at geratu zen: konderriaren lehen erakunde-hezurdura sustatzen zuten monasterio zein burguak Arabatik kanpo sortu ziren. Horrela, X. mendearen bukaeran, Gaztelako konderriaren kohesioa pitzatu zenean, Arabak esparru desartikulatu baten irudia eskaintzen zuen, lurraldea antola lezakeen erakunde zein leinurik ez zuela.

Iruñeak bere aldetik errendizio-ituna sinatu zuen musulmanekin. Hiriak komunitate islamiko baten presentzia baketsua ezagutu zuen VIII. mendeko zenbait hamarkadatan zehar. Frankoen agintaldia —ziurrenik Iruñea konderri karolingiarra izan zen 812-816. urteen artean— parentesi labur bat baino ez zen izan. 816tik aurrera Iruñea al-Andalusen esparrura itzuli zen. Tradizioz lehen dinastia bezala kontsideratuak izan diren Enekotarrek (c. 840 ? - 905) oreka zailean gobernatu zuten: al-Andaluseko Goiko Mugako joko politikoan menpeko posizio batean aritzen ziren, barneko gizarte kristauaren aurrean legezko printzeak bezala agertu behar zuten bitartean. IX. mendearen bukaeran, emirerriaren krisiak Enekotarren gainbehera ekarri zuen. 905ean Iruñeko baroiek lehen errege Ximenotarrari, Antso Gartzez I.ari, eman zioten buruzagitza, erabateko aldaketaren seinale: harrezkero nafarren politika musulmanen aurkako borroka izan zen. Antso Gartzez I.arekin (905-925), iruindarrek Goi Errioxa konkistatu zieten musulmanei eta ekialdetik Aragoiko konderria erreinura lotu zuten. Ondorengo belaunaldietan, hegoalderako zabalkundea ezinezkoa gertatu zen, kaliferriaren eraketak Kordobaren boterea suspertu zuen eta. Baina Iruñeko erregeek gero eta eragin handiagoa lortu zuten Penintsulako joko-taulan, bai aliantza politikoak gauzatzen zituzten ezkontzen bitartez, bai Leongo erreinua astintzen zuten barne gatazketan parte hartuz.

Gizarte-egituren aldetik, Goi Erdi Aroko Nafarroak eta Arabak ezaugarri asko dituzte erkide. Bizkaiko erregistro arkeologikoak ere antzeko irudia iradokitzen du. Jabego handirik gabeko gizarte hauetan, komunitate txikietan antolatutako nekazariak dira lurren kolonizazioaren eta herrien finkatzearen eragileak, bai eta lehen eliza askoren sortzaileak ere. Aitonen semeen kategoriaz izenda ditzakegun etxeek tokian tokiko goi-geruza bat osatzen dute. Baliabide gehiago eta auzoen arteko nolabaiteko lehentasuna dituzten etxe hauek egitura politikoen artikulazioa bermatzen dute. Izan ere, artikulazio hau gerran eta justizian oinarritzen da: gerrak gorputz politikoa kohesionatzen du eta luxua zein metal preziatuak eskuratzeko modu nagusia da. Oztean etxe sendoek baino ezin dute egokiro parte hartu, behar diren arma eta zaldiekin. Justiziaren praktika dela eta, honelako erakunde-formalizazio urriko gizarteetan esparru lokalean eragina duten gizonekin kontatu behar da halabeharrez.

Hutsune bat ere konpartitzen zuten mendebaldeko eta ekialdeko euskal lurraldeek: kulturgune garrantzitsurik ez zen garatu haien baitan. Errioxaren konkistaren ostean, Naiara da Iruñeko monarkiak lehenesten duen egoitza. Erregeek Ebro aldean sustatzen dituzte monasterio handiak, hots liburutegi eta idaztegiak. X. mendearen bigarren erdialdean, Donemiliaga Kukula eta Albeldako San Martin Espainia kristauko lehen mailako kulturguneak dira; IX. mendean nafar-aragoiar Pirinioetan zeuden monasterioak ordea gainbeheran sartzen dira. Haien —bereziki Leireren— liburutegi zaharretatik hondakinak baizik ez zaizkigu geratzen. Araban ez dago Cardeña edo Covarrubias-

en pareko fundaziorik x. mendean. Bertoko apezpikutza, egoitza egonkorrik gabea, erakunde baten itzala da.

Mende hauetan ugaltzen hasten diren izkribu eta idazkunetan, euskara erruz azaleratzen da. Donemiliagako glosak, ospetsuak eta guztiz preziatuak izanagatik, salbuespenak dira, kasu gehienetan leku- zein pertsona-izenetan entzuten baita hizkuntzaren oihartzuna. 1000. urte aurreko testigantzak ez dira nahikoak euskararen mugak zehazteko, baina antzemateen ditugun zertzeladek geroko geografia historikoa iragartzen dute: Erronkari dugu ekialdeko muga, mendebaldetik Aiara eta Mena artean dagoela. Garai honetako berezitasun deigarriena Ebro ibaiaz haraindiko euskara da: gaurko Burgosko probintzian, Demandako mendietan euskaldunen inmigrazioa gertatu zen viii.-ix. mendeetan, toponimian zein agirietan arrasto ugari utzi zituena. Bigarren olatu bat xi. mendean heldu zen ekialderago, alegia nafarrek konkistatua zuten Goi Errioxara. Hango euskara gutxienez xiii. menderarte egon zen bizirik eta oraingo Errioxako toponimia nagusian gardenki antzematen da.

## 2. EUSKAL ESPARRU POLITIKOEN BIDEGURUTZEA (1009-1200)

1009. urteko gerra zibilak al-Andalusen batasuna puskatu zuen eta horren ondorioz nagusitasun militarra kristauen eskuetara pasatu zen. Une hartako Estatu kristaurik sendoena Antso III Nagusiaren Iruñea zen, Leongo aristokrazia borroka zibilen zurrunbilotik atera ezinik zegoen bitartean. Antsok Gaztelako konderriaren agintea eskuratu zuenean, mendebaldeko euskal lurraldeen gaineko gobernua ere ziurtatu zuen. Haren ostean, Gartzea III Naiarakoak (1035-1054) Araba eta Bizkaia erreinura lotzeko politikari ekin zion. Honen ondorioak dira Bizkai barruko lehen testuak, izan ere. Baina garai honetan lehia politiko eta militarra Penintsula osoko eskalan jokatzen zen: konkistari ekin beharrean, kristauek protektoratu militarrak inposatzen zizkieten taifetako erreinuei, iparraldera zilar kopuru txundigarriak bideratuz. Gartzea Naiarakoaren denboran, Iruñeak Leon-Gaztelarekiko norgehiagokari eutsi zion. Honek gerrara eraman zituen bi erreinuak eta Atapuercako guduan (1054) nafarrek euren erregea ez eze, al-Andalusen gaineko nagusitasuna ere galdu zuten, eta harekin zilar jario erregularrak. Aristokrazia militarrak barrurantz bihurtu zuen orduan bere oldarra eta krisi feudala piztu zen. Barne-gatazka honen azken episodioan baroiek Antso Gartzez IV. erregea hil zuten 1076. urtean eta jarraian fideltasunak Leongo eta Aragoiko erregeei eskaini zizkieten: hezurdura aristokratikoarekin batera, Iruñeko erreinua bitan zatitu zen.

Nafarroako baroiek Aragoiko Antso Ramirez hartu zuten errege eta aragoiarrekin batera Ebro haranaren konkistari ekin zioten. Zaragozaz eta Tuteraz 1118. eta 1119. urteetan

jabetu ziren, hurrenez hurren. xii. mendean zehar, Nafarroako Erdi Aro klasikoa gorpuztu zen. Nafarroa zaharrean, krisi feudalak nekazarien askatasunaren endekatzea ekarri zuen, eta harekin batera jaurgoen ugaltzea eta morrontzaren hedatzea. Erriberako lautadetan aldiz, kolonizazioa askatasun maila handiagoko herri handi harresituen bitartez bideratu zen. Horrez gain, erromesaldia eta merkataritza uztartzen zituen Santiago bidean zehar frankoen komunitateak finkatu ziren; Koroak foruen bitartez integratu zituen etorkin hauek eta horren ondorioz hiri berri sorta loratu zen. Hurrengo belaunaldietan, juduen aljamek ere euren ekarpena egin zioten erreinuko gizartearen aniztasunari. xi. mendearen bukaeratik, Elizaren Erreformak Nafarroako apezpikutza eta monasterio handiak Hego Frantziatik etorritako elizgizonen agintepean utzi zituen. Apezpiku eta abade hauen eskutik Erromanikoaren aroa heldu zitzaigun. Kulturguneak Iruñeko katedrala, Iratxeko monasterioa edo Leirekoa ditugu, azken hau Errioxako idaztegien konpetentziatik libratu dela. Katedralean Robert Ketton-eko intelektual ingelesa egon zen, Koranaren eta testu zientifiko arabiarren itzulpenak burutuz; Tuterakoak ditugu kultura hebraikoan ospe handia izan zuten Yehuda Halevi eta Benjamin Tuterako, biek ala biek jardun intelektuala Nafarroatik kanpo gauzatu bazuten ere.

Atapuercako hondamenaren ostean, Bizkaian Iruñeko monarkiaren eragin politikoa ezabatu egin zen, eta Araban atzera egin zuen, mendebaldeko baroiak al-Andalusen jabe zen Leongo Alfontso VI.arengana hurbiltzen ziren bitartean. Azkenik, 1076ko magnizidioaren ostean, leialtasunak eta lurraldeak Leonera pasatu ziren. Ondorengo hamarkadetan hemen antzematen ditugun eraldaketak ez dira Nafarroakoak bezain ikusgarriak. Usadio feudalen hedatzearen berri badugu, baina al-Andalusen gaineko jardun militarra ezin erakargarriagoa zen aristokraziarentzat eta horrek nekazarien gaineko presioa leundu bide zuen. Bestalde Araba, Bizkaia eta Gipuzkoa merkatari-ardatzetik eta beraz hirigintzaren lehen loralditik kanpo zeuden. 1088. urtearen inguruan, Elizaren Erreformaren ondorioz, elizbarrutien berrantolaketak Armentian egoitza zuen Arabako apezpikutza kendu zuen: Araba eta Bizkaia Calahorrako gotzaindegira lotu ziren.

Erreinuak elkartzeko egitasmoa guztiz okertu bazen ere, 1109. urteko akordioak, Leongo Urraka eta Aragoiko Alfontso Batailaria ezkontzaz gauzatu zenak, Araba, Bizkaia eta Gipuzkoa iruindarren eta aragoiarren erregearen agintepean uzteko ondorioa izan zuen. Garai gatazkatsua zen baina. 1134an Alfontso Batailariaren testamentuak sortutako korapilo politikoaren aurrean, Iruñean elkartutako baroiek Aragoitik aldentzea erabaki zuten, Araba, Bizkai, Gipuzkoa eta Tuterako agintariak alde zeudela. Baina birsortutako nafar erreinua itxita geratu zen hegoaldetik, al-Andalusekin mugarik izan gabe. Honek betirako utzi zuen gainerako Estatu kristauen atzean, Goi Erdi Aroko Iparralde kristauan fosildua bezala. 1179an Bizkaia Gaztelara pasatu zen. 1199-1200 urteetan, tropa gaztelauek Araba eta Gipuzkoa konkistatu zituzten.

XII. mendearen bigarren erdialdean, Nafarroako Koroa berriak bere gobernu-oinarriak sendotu behar izan zituen. Erregearen lurretako komunitate askok ordura arteko jaun-baldintzak leuntzen eta arrazionalizatzen zituzten foruak jaso zituzten. Maila jasoagoko hiri-foruen bitartez, merkatu- eta administrazio-hezurdura egituratu zen erreinu osoan zehar. Mugimendu honen barruan, Arabak eta Gipuzkoak hirigintzaren lehen urratsak egin zituzten. Arabako emanaldien artean, Gasteizek 1181ean jaso zuen forua dago, ziurrenik XII. mendearen hasieran sortutako hiri harresituaren estatusa berresteko. Gipuzkoan, urte hauen inguruan jaso zuen Donostiak ere berea, itsasaldeko lehena. Izan ere, X.-XI. mendeetatik aurrera, ontzigintzaren, nabigazioaren eta arrantzaren garapenak Goi Erdi Aroan ia despopulaturik egondako kostaldea hazkunde dinamika batean sartua zuen.

Euskara, oraindik ere, leku- eta pertsona-izenen bitartez agertzen zaigu gehienetan. Baina garaiko testuen biderkatzeak leiho txikiak zabaltzen ditu han-hemenka: jaun nafar batek euskaraz idatzarazten ditu bere izena eta filiazioa pergamino batean; Iruñeko eskriba batek «nafarren hizkuntzaz» jasotzen ditu Aralarko unaien buruzagien karguak; Santiagora doan Aymeric Picaud-ek euskal hiztegitxo bat jasotzen du, euskarak zakurren zaunkak gogorarazi arren… Biztanleen ahotan nafar erromantzea, gaztelania, okzitaniera, arabiera, hebreera eta euskara entzun zitezkeen lurralde hauetan, euskara gehienen ama hizkuntza zelarik, lanarena eta jaiena, gerrarena eta ipuinena. Ez ordea idazkuntzarena. Apurka bada ere, XII. mendean latinetik gertuago dagoen eta inguruko idaztegietan erabiltzen hasita dagoen erromantzeak helduko dio hizkuntza idatziaren estatusari. Bestalde euskararen geografia zehazkiago ikusten dugu. Garai modernora helduko den esparrutik ez dago oso urrun: Hegoaldetik Artaxoa – Tafalla aldea Nafarroan, Trebiñu Araban, betiere Errioxan bizirik jarraitzen duela.

## 3. ELKARRENGANDIK ALDENDUTAKO BIDEEN FINKAPENA (XIII.-XIV. MENDEAK)

1200. urteak Nafarroa eta mendebaldeko lurraldeen arteko behin betiko banaketa markatzen du. Aurrerantzean, bataren eta bestearen bilakaerak zeharo desberdinak izango dira esparru gehienetan.

Nafarroan, Antso VII. Azkarra 1234an hil ondoren, Champagne-ko Teobaldo kondeak heredatu zuen Tronua. Handik eta Gaztelara lotua izan arte, erreinuaren historia politikoaren giltzarrietako bat hauxe dugu, oso salbuespen gutxirekin errege-erreginak frantsesak izatea edo frantses leinuetatik sortuak. Honek, batetik, erreinuaren agintaritza-aparatuaren indartzea ekarri zuen, Europako monarkiarik handienaren ereduari orpoz orpo jarraitzen baitzioten gobernu-, fiskalitate- eta burokrazia-teknikek. Bestetik, astinduak eragin zituen bertoko gizartean eta arkitektura politikoan. Izan ere, gobernadoreen bitartez

agintzen zuten errege arrotzen aurrean, negoziaketak eta istiluak txandakatu ziren. Baroi eta aitonen semeek lehen aro feudalean lortutako pribilegioei eusteko, Foru Orokorraren lehen erredakzioa osatu zen XIII. mendean. Eragile politiko bakoitzak —baroien leinuak, Eliz agintariak, aitonen semeen multzo handia, hiriak— bere estrategia jarraitu bazuen ere, aitonen semeen batzarrek erreinuko klase feudalaren ahotsa eraman zuten zenbaitetan. 1276an behingoz interesen elkartzea gertatu zenean, armada frantses batek odoletan ito zuen errebolta Nabarreriako Suntsiketan. 1328tik aurrera berriz, Evreux-tarren dinastiak nafar boteretsuen kontsentsua gauzatzen jakin zuen.

XIV. mendean, Nafarroaren erakundetzea osatu zen: Foruaren lehen Hobekuntza, Kontuen Ganbararen berrantolatzea, Gorteen arautzea, merindadeetan oinarritutako administrazioaren finkatzea… Baina Behe Erdi Aroko krisi latzaren denbora ere bazen. Europa osoan bezala goseteak berragertu ondoren, 1348. urtean Izurri Beltzak krudeltasunez zigortu zuen Nafarroako populazioa: Lizarrako merindadeko etxeen bi herenetatik gora hustu zituen eritasunaren lehen uhinak; gainerako lurraldeetan ez ziren askoz hobeto atera. Besoen eskasia, lurren uztea, bizirik geratu ziren familien desegituraketa, goseteak eta izurriaren eraso berriak: panorama honen aurrean, eta honek nobleentzat zekarren errenten galeraren aurrean, Koroak nekazarien gaineko presio fiskala areagotu zuen eta gerra-zerbitzuak erabili zituen nobleteria bere inguruan biltzeko eta zergen etekinak birbanatzeko. Normandian jaurerriak zituen Karlos II.arekin Nafarroako nobleak Ehun Urteko Gerran sartzen ziren bitartean, laborariak eta nekazaritza —erreinuaren zutabe ekonomikoak— estualdi eta pobretze dinamika batetik atera ezinik zeuden.

Monarkiaren indartzeak eta Evreuxtarren nazioarteko harremanek Europa osoko poetak, musikariak, harginak eta eskultoreak erakarri zituzten Nafarroara. Gainerako monarkietan bezalaxe, agertoki txundigarriek inguratzen zuten erregea. Hauxe zen Erriberriko gaztelu berriaren betekizuna. Unibertsitaterik ordea ez zen sortu: Koroak diruz laguntzen zituen zenbait ikasleren ikasketak atzerrian, Toulousen eta Avignonen bereziki. Euskara, jakina, ez da mundu sofistikatu honetan antzematen. Foru Orokorrean euskaraz agertzen diren hitz edo esapide gehienek jaunei edo erregeari eman beharreko zerbitzuak eta ordainketak izendatzen dituzte. «Aralarko Done Mikelen Mirarien» narrazioko pertsonaiek euskaraz egiten zuten —lehen testua latinez idatzi bazen ere—; han hemenka euskararen beharra jasotzen zen prozedura judizialen berri jendeari emateko; izenek eta izengoitiek saldoka ematen dizkigute euskal hitzak. Testurik ez ordea, kantarik ez, bertsorik ez oraingoz.

Mendebaldean, Bizkaia, Gipuzkoa eta Arabako hirigintzaren loraldiak aro berri bati eman zion hasiera. Barruko zein kanpoko eragileek jokatu zuten honen alde, hala nola itsasaldearen dinamismoa, burdingintzaren aurrerapenak edo XIII. mendeko geografia

ekonomikoaren aldaketa. Euskal kostaldea lehen mailako merkatu-ardatz baten erdian geratu zen: Gaztelako artilea eta oligarkia aberatsaren eskaria hegoaldean eta Europako manufakturetako guneak iparraldean. Horri Koroaren interes politikoa gehitu behar zaio, berriki inkorporatutako lurraldeetan komunitate sendo fidelak izatekoa alegia. Lehen olatuko hiriak portuetan eta Mesetarako ateetan sortu ziren, Gasteiz eta Agurain tartekari nagusiak zirela. XIII.-XIV. mendeen artean hiri-sare trinko batek mendebaldeko Euskal Herria artikulatu zuen.

Habitat gotortu eta planifikatuen paisaia berri bat ez eze, hiriek erakunde, lanbide, bizimodu, agintari, Zuzenbide, interes eta botere-joko berriak ekarri zituzten. Baita ordura arteko ordena soziopolitikoari desafio egiteko prest zeuden komunitate sendoak ere. Bizkaian Gaztelako oligarkiaren kideak ziren Harotarrengan ordena tradizionala eta hiri-ingurua uztartzeko borondatea antzematen da: Bizkaiko hirien udalerriak mugatuak dira hasieratik eta Gernikako Batzarren lehen berriek (1342) aitonen semeen ahotsaren erakundetzea erakusten dute. Araban aldiz, Gasteizen eta Agurainen jurisdikzioen hedakundeak eraginda, antzeko betekizuna zuen Arriagako Kofradia garai berean desegin zen. Klaseko pribilegioak bermatzearen truke, Arabako jaun handiak eta aitonen semeak eragile politiko bateratu bezala desagertu ziren 1332an, Arriagako Kofradia desegin zenean. Gipuzkoan ez dugu lurralde osoko aitonen semeen elkargo baten berririk. Lurraldea unibertsitate eta haranetan antolatua agertzen zen hiriek egitura zaharra urratu zutenean. Koroaren sostenguaz, gipuzkoar hiriak berehala hasi ziren jurisdikzioa zabaltzen, jarduera ekonomiko berriak biltzen eta aitonen semeei mendien, basoen eta uren kontrolaren gaineko erronka botatzen.

XIV. mendeko krisiak tentsio hauek areagotu egin zituen. Hilteen kolpea Nafarroan baino leunagoa izan bazen ere, populazioaren galera eta jaun-errenten jaitsiera gertatu ziren. Arabako leinu handiek atarramentua atera zioten Gaztelako gerra dinastikoari: Gasteizen udalerri handia uharte bat bezala geratu zen jaunen jurisdikzioaren menpean eroritako Arabako herri, haran eta hirien artean. Bizkaian eta Gipuzkoan ordea, krisitik ateratzeko modua izan zen erabakigarria. Europa osoko gerren ugaltzeak eta teknologia belikoaren garapen areagotuak burdinaren eskaria disparatu zuen. Bizkaian eta Gipuzkoan kalitate oneko mineralaren, erregaiaren eta ur-lasterren ugaritasunari hirien eta portuen azpiegitura gehitzen zitzaion. Zeharrolak biderkatu ziren, bai eta haietatik eratorritako hamaika bizibide eta errenta-iturri ere. Horrez gain, merkataritza —hots ontziolen, itsasontzien eta marinelen beharra— erritmo bizian hazi zen Europa osoan. Ordena tradizionalaren oinarrien erosioa lehenagotik hasita bazegoen, ekonomia-esparru berriengatiko lehiak Bandoen Gerren oinarriak ipini zituen.

Nafarroan ez bezala, mendebaldeko lurraldeetan ez zegoen Eliz erakunde handirik edo erreinuko administrazio-gunerik. Hortaz, goi mailako kulturgunerik ere ez. Lurraldearen

hezurdura udalen sare trinkoak osatzen zuen: hirien zerbitzurako burokraziaren eta apaizgoaren behar intelektual apalak asetzeko moduko ikastegiak besterik ez zeuden. Goi mailako literatura, gure lurraldeetan baino, Gaztelako gortean mugitzen diren magnateen inguruan aurki dezakegu: Aiara Kantziler gasteiztarra dugu irudi gorena. Euskarak zeharka baizik ez zuen lekurik erregistro idatzian. Hirien gobernuan erreinuaren tresnak erabiltzen ziren, haien artean administrazioaren hizkuntza zegoela. Gaztelaniaz daude historian lehenengoz Bizkai, Araba eta Gipuzkoaren barruan ugaltzen diren artxiboak. Horrek ordea ez du esan nahi euskara landa-ingurura mugatuta dagoenik, ezta hurrik eman ere.

## 4. PIRINIOETATIK IPARRALDERA

Goi Erdi Aroan, Lapurdum hiri zaharraren lurraldea eta Zuberoa Gaskoiniako dukerri karolingiarraren zati txikiak ziren, botereguneetatik at. Ezer gutxi dakigu haiei buruz. Frantziako erreinuaren hegoalde osoan bezala, Gaskoinian ere botere politikoa puskatu egin zen IX. mendearen erdialdetik aurrera. XI. mendean Lapurdi eta Zuberoa bizkonderriak ziren.

Lapurdiko bizkonderriaren lehen berria 1059koa da, Baionako elizbarrutia berrezartzen den urtekoa hain zuzen. Izan ere, merkataritza eta arrantzari esker berpizten hasita zegoen Baiona bizkondearen egoitza zen. Leonor Akitaniakoaren ezkontzaren ondorioz, lurralde hauek errege ingelesen jaurgoa izan ziren 1154tik aurrera. Gero, Lapurdiko nobleen errebolta Rikardo Lehoi-bihotzak zapaldu ondoren, bizkonderria erregearen eskuetan geratu zen 1193an. Handik aurrera, erregeak izendatutako baile bat dugu Lapurdiko agintari gorena. 1215ean Juan Lurgabearengandik udal-forua jasota, Baionaren gobernua Lapurditik banatu zen. Autonomia politikoaz gain, Anjou-tar «Inperio» ingelesaren sare ekonomikoetan txertatu izanak oparoaldi berezia ekarri zion Baionari, baina Lapurdiko itsasalde guztiak ezagutu zuen garai honetan Bizkaian eta Gipuzkoan ere ikusi dugun dinamismoa.

Zuberoako bizkondearen agerraldia ilunagoa da. XI. mendetik aurrera, feudalitatearen joko-zelaian murgiltzen zen bere botere-eremua mantentzeko. XII. mendearen lehen hamarkadetan, Bearnoko bizkondeekin arazoak zituela, Aragoiko erregearen basailu topatzen dugu Zuberoako bizkondea Ebro haranaren konkistan. XIII. mendean bi jaunen basailua zen, Nafarroako Teobaldo I.arena eta Ingalaterrako erregearena. Azken honek lehentasuna zuen baina, eta XIV. mendean ingelesen subiranotasunak ez zeukan lehiakiderik.

Bere aldetik, denborarekin Nafarroa Beherea bezala ezagutuko dugun lurraldea entitate txikien mosaikoa zen XII. mendean. Ziurrenik jatorriz Lapurdiko barrutikoak

izanik, muturrera eramandako boterearen puskatze feudala erakusten dute haran hauek. Ingelesen eta nafarren arteko abenikozko egoera baliatuz, Tartasko bizkondeak eta beste jaun batzuek Nafarroako erregeen basailutza hautatu zuten XII. mendearen bukaeran. 1194rako nafarren aginduetara zegoen Donibaneko gazteluzaina. Portuez Haraindiko Nafarroaren eskuratzea erreinuak mendebaldeko lurrak galdu zituen garai bertsuan gertatu zen.

## EUSKARA ERDI AROAN

Patxi Salaberri Zaratiegi

### SARRERA

Lan honetan, lehen-lehenik, mugaz honaindian, Hegoaldean, euskarak eta erdarak garai batean zituzten mugez mintzo gara, eta «gara» diot mendebaldeari dagokion zatia Mikel Gorrotxategik apailatu duelako, eta Arabaren ingurukoa Elena Martínez de Madinak eta Roberto González de Viñasprek. Nafarroako hizkuntza muga, berriz, atal hau izenpetzen duenak deskribatu du. Gure helburua, oraingoan, ez da izan euskararen gizaldiz gizaldiko atzerakadaren berri zehatza ematea, behin baino gehiagotan egin den bezala, denboraz -garaia aldatzen da, eremuaren arabera- gure hizkuntzak eduki zuen gehieneko hedadura zein zen marraztea baizik. Ikus daitekeen moduan, sartaldetik hasi gara eta poliki-poliki Nafarroara etorri, Araban gaindi.

Ondoren Erdi Aroko euskararen ezaugarri batzuk azaltzen ditut, eskura dauzkagun mota bateko edo besteko testu edo testutxoetan eta, batez ere, gero eta ugariago ditugun datu onomastikoetan abiapuntu harturik. Azterketa hizkuntza mailaka antolatu dut: lehenik fonetika-fonologiari doakion atala dator, luzeena; bigarrenik, morfosintaxiari eskainitako aise laburragoa heldu da eta, buruenik, semantika axaletik ukitzen duena dago, hau da, Erdi Aroko izen eta materialetan edireten dugun hiztegia ukitzen duena. Bigarren azpiatal honi lotu aitzinetik datuak ateratzeko ibili ditudan iturrien berri ematen dut, era honetara aipatzen den toponimo edo item onomastiko bakoitzaren ondoan erreferentzia bibliografikoa sartu beharrik ez izateko, hola lana hein batean arindu nahian (ik. bigarren puntua). Dena dela, ibili ditudan gainerako liburu eta artikulu gehienak bibliografian ageri dira, nire asmoa oraingoan burutik buruko zerrenda ematea izan ez bada ere.

# 1. EUSKARAREN MUGA HISTORIKOAK, HEGOALDEAN

## 1.1. Mendebaldeko muga

Sartaldeko euskararen muga toponimiaren bidez aztertzea ez da erraza, ikerketa historikorik aski ez dagoelako lehenik, eta alderdi honetako dokumentazioa aski berria delako gero. Bestalde, mugak zein izan diren zehazteko leku izenetan oinarritu behar dugunez gero, argi izan behar dugu euskal toponimoa zer den, aipatu zehaztapena egiteko garaian arazorik izan ez dadin. Gure ustez euskal toponimoa euskaldunek sortu edo moldatu duten edozein toki izen da. Hala ere, muga honetan zenbait aldiz izen hibridoak ere ageri zaizkigu. Mapan ikusten den bezala, hiru baieztapen egin daitezke alderdi honetako hizkuntza egoeraz: a) kostaldeko toponimia goiz erdararatu zen, b) Aiara inguruko hizkuntza muga iraunkorra izan da, eta c) Enkarterriko muga nahasia da.

Datuak aztertzen baditugu, esan dezakegu Castro-Urdialesen ez dela ikerketa historiko asko egin eta honek gauzak garbi ikustea galarazten duela. Nolanahi ere, bada XVI. mendetik lekukotzen den euskal toponimo bat, argi samarra: *Ribálzaga*, *Arribaltzaga*-tik irten bide dena, eta itxuraz behintzat euskaratikakotzat jo ditzakegun *Zarzaga* eta *Maya*, azken hau kontuz ibiltzekoa bada ere. *Ribalzaga* Guriezo eta Castro-Urdiales herrien artean dago, bi metro eta erdiko menhir batetik (*El ilso de Anguia* izenekotik) gertu, bi trikuharri handiren erdian. Hemen elkartzen ziren Bizkaiko Turtzioz herria eta gaur egun Castro-Urdialesko auzoak diren *Junta de Sámano*-ko herri eta kontzejuak (Mioño, Ontón, Otañes, Sámano, Agüera eta Santullán). Galdames, Trapagaran eta Ortuellako mugan orain *Peñas Negras* deritzan tokia dago, Portugaleteko hiri-gutunean *Arribelçaga* edo *Arbelçaga* idatzirik azaltzen dena.

Kantabriako Otañes herriko munarri batek *Ilso de Perutxote* izena du, eta badakigu antroponimo batean oinarriturik dagoen toponimoa dela, *Bienandanzas y Fortunas* liburuan hau ageri baita: *«Titulo de la pelea de Mendieta e de la muerte [de] Perucho, fijo de Pero Ochote de Otanes, e de Gilete»*.

Muskiz, Zierbena, Abanto eta Santurtzi aztertzean kostaldea XVI. menderako erdaldunduta zegoela ikusten da, euskal toponimoak gutxi eta zaharrak direlako: Zierbenan seguru bakarra *Atxaga* da eta Muskizen, herri izenaz gainera, *Agorriga* (*Río Mayor*) dugu Galdamesko mugan. Euskal toponimia Abanton hasten da: *Gallarta* (*Gallarreta* antzina), *Olabarrieta* (*Los Castaños* egun), *Murrieta* eta *Castiel çarra* (1475) ditugu hemen; azken hau *Gaztizarro* edo *El Preven* da orain. 1214ko dokumentu batean gaur ezezaguna zaigun *Gastanega* ageri da, seguru asko *Gaztañaga* edo *Gastañaga* irakurri edo ulertu behar dena.

Beherago, Artzentalesen euskal toponimoak gutxi dira, zalantzazko *Betaio* orotoponimoa (cf. *Bedaio*), *Agirre* oikonimoa eta *(I)turrion* hidronimoa besterik ez; esanguratsua da, gainera, auzoen izenak erdarazkoak izatea. Sopuertan, aldiz, ugariak dira euskal toponimo txikiak (*Artatxo*, *Artegi*, *Garai*, *Landazuri*, *Olabarrieta*…), eta are gehiago Galdamesen,

hemen kasu batzuetan erdal izen berriak aurreko zaharra ordezkatu duen arren: *Bellastegi*, *(E)txabarri*, *La Aceña* (*Atxuriaga*), *Laia*, *Larrea*, *Lexartza*, *Loitzaga*, *Peñoñuri*, *Urallaga*, *Zubiaga*… Zallan ere euskal toponimia da nagusi, baina Balmasedako mugan erdal izenak dauzkagu; adibidez, *Bolunburu* da Cadagua ibaian mendebalderen dagoen auzoa, baina *La Herrera* deritza Balmaseda aldera dagoenari. Iparralderago, Zallan, *Otxaran* haran eta auzoa daude, erromatar galtzadan, baita *Rétola* auzoa (< **Erretola*?) ere; herri berean, Burgosko mugatik hurbil, *Lanzagorta* izeneko etxea egon zen.

Gordexolan *Urdanegi* jauregia dago, *Rodayega* (< *río de Ayega*) errekaren ondoan, Burgosko *Arza* (< *har-* 'harri' + *-tza* leku-ugaritasunezko atzizkia, itxuraz) herritik gertu. Aiaran, bestalde, muga iraunkorra izan bide da eta giltza, kasu honetan, Artziniega elebiduna izan dela dirudi, auzo izen batzuek (*Mendieta*-k eta *Sojoguti* edo *Soxoguti*-k)

ERDI AROA. MENDEBALEKO MUGA




Egileak: Patxi Galé / Mikel Gorrotxategi

Muga
Ibaia
Erromatar galtzada

adierazten duten bezala; herri honetatik eta Erretestik datozen ibaien elkarguneari *Ureta* (*Úreta*) esaten zaio, eta Soxogutiren eta Erretesen arteko mendiak *Zaballa* du izena. *Lexartzu* (*Lejarzo*) Aiarako herria da, Añes eta Salmantón artean dagoena (ik. Galé, Gorrotxategi eta Mugurutza 2013).

Bestalde, Urdanegi eta Mendieta arteko mendilerroan, Pando mendian, *Garate* dugu; Gorobel mendilerroan *Iturrigorri* dago, ahoz gehienbat *Tologorri* deitua, bai eta *Eskutxi* ere, 804. urtean *Ezquti* gisa azaltzen dena. Mendilerro honetatik sortaldera, Burgosen, *Zaballa* herria dago.

### 1.2. Arabako muga

Arabako euskararen mugen karietara, Mitxelenak (1972) esaten du segur aski XI. mendeko hizkuntza egoera, 1025eko Rejan ageri zaiguna, eta bi mende lehenagokoa antzekoak zirela, eta data horretatik aurrera garbi bereizten direla euskal eremua eta erdal eremua. Beraz, eta lehenagoko datu gutxi baititugu, 1025 data erabakigarria da Arabako euskararen hedadura zein zen ikusteko garaian. Rejan agertzen diren hermandadeen izenen azterketak Mitxelenaren ustekaria berresten du: *Ubarrundia*, *Malizhaeza, Camboa*, *Harhazua* (I eta II), *Hiraszaeza*, *Barrandiz*, *Hegiraz* eta *VII Alfozes*-en euskal izenak badaude, argi eta garbi; hegoalderagoko *Harrahia* eta *Riuo d iuita* merindadeek ere euskal izen franko erakusten dituzte, baina dokumentu horretako mugak ez datoz bat gaurkoekin. Bestalde, Arabako Mendialdeko herri asko ez dira aipatzen, adibidez Harana eta Kanpezukoak, eta Arabako Errioxakoak ere ez dira azaltzen. Behe Erdi Aroko beste agiri batzuek ere (1257koak eta 1294koak, esaterako), Arabako toponimo nagusi mordoxka aipatzen duten arren, ez dute argi handirik egiten muga zehatzak finkatzeko tenorean.

Caro Barojak (1945: 17-19) XVI. mendearen aurretik Arabako euskara indartsu zegokeela esaten du. Egiten duen mapan, aipatutako gizaldian euskararen muga Trebiñu Konderrian eta Arabako Mendialdean ageri da hein handian, hots, ez da alde nabarmenik Rejan agertzen denarekin, gotorlekutzat Nafarroako Sonsierra eta Toloño mendilerroa hartuz, eta alde batera utziz Burgosko apezpikutegian sartzen diren mendebaldereneko herriak. Era berean, nabarmentzekoa iruditzen zaio, Merino Urrutiak (1935: 624-626) dioen bezala, Erdi Aroan gaur egun Burgoskoak edo Errioxakoak diren lurretan euskaldun guneak izatea.

Odón de Apraiz (1953) da Arabako euskararen atzerakada irudikatzeko mapa marraztu duen autore bakarra. Errioxaren erdia, hegoaldea, elebiduntzat ematen du, baina iparraldea, Guardiatik Toloño mendikateraino doana, euskaldun hutsa izango zen aipatu autorearen arabera 1200 eta 1500 artean. Hortik gorako alderdia ere euskalduna izango zen, Kanpezu izan ezik.

Toponimiaren azterketak mugarriztatze hori berresten du, neurri handi batean. Lurraldearen alderdi batean mintzatzen zen hizkuntzaren lekukoa «Donemiliagako Reja» deritzan dokumentu toponimian aberatsa da, XI. mendekoa. Ondoren, XV. mende arte badira beste agiri batzuk, foru edo pribilegioak, maiz herrien bataio berriaren lekuko direnak. Azken toponimia ikerketek frogatzen dute orain Gasteizko udalerria den horretan (hirurogeita lau herrixkak barne) euskara zela jendearen eguneroko hizkuntza. Ugariak dira mintzaira honi erreferentzia egiten dioten testigantzak; 1630ean hau ageri da: «una heredad en el término de *El Rincón*, y en basquenze *Oquelua*». Euskararen barruan sortu eta XVIII. mendetik aurrera itzultzen hasten diren toki izenak ere ez dira gutxi; Gasteizko oraingo *Campo de los Palacios*, adibidez, *Palazioetataco landea* (sic) da 1659an.

Arabako iparraldean, Aiara aldea lehen lekukotasunetatik euskararen eta erdararen arteko ukipen gunetzat azaltzen da. Ezaguna da 1371ko aipu hau: *«E los que vinieron a poblar la Tierra de Ayala, dellos eran vascongados e dellos latinados»*. Leku izenek hori berresten dute, izan ere Aiara eta Artziniega udalerrietako mendebaleko alderdian bai baitira toponimia txikia erdarazkoa duten herriak, hala nola Campijo, Santa Koloma, Erretes edo Añes. Eremu honek hizkuntza *continuum* bat osatuko luke Enkarterriko mendebaldeko eta Mena ibarreko gaztelaniarekin.

Alabaina, mintzaira mugarritze hori batzuetan lausoturik eta nabarturik azaltzen da, seinale hizkuntza erkidegoak ez zeudela erabat bereizirik. Hau beharbada populazioen aspaldiko mugimenduen isla izango da. Esaterako, euskal izena duten Mendietan edo Soxogutin ia ez dago etorki horretako toponimo txikirik, eta aitzitik, erdal izena duten Llanteno, Costera (Opellora) edo Erretes Llantenon ugariak dira euskaratikako leku izenak. Guztiarekin ere, Aiaran euskara mintzatu dela ongi lekukotua dago eta nabaria da lurraldearen eremu zabal batean. Baranbion, adibidez, XX. mendearen lehen hamarkadetan itzali zen, eta agirietan badira euskara bizirik zegoela frogatzen duten testigantzak. Esaterako, 1682an Artziniegako hermandadeak Arabako Batzar Nagusietara igorritako prokuradorea atzera bidali zuten, euskaraz besterik ez zekielako: *«el procurador que bino por la hermandad de Arçiniega no sauia romanze ni entendia lo que dichos señores rresolbian»* (cf. Breñas & Otsoa de Alda 2002: 62).

Aiaratik hegoaldera, euskararen muga Burgosko Losa ibarra ondoan duen Gibijo mendian eta Arkamon egon da luzaz; alderdi honetako Urkabustaiz eta Kuartango euskaldunak izan dira. Horren froga dira oinarri euskaran duten toponimo ugariak eta, halaber, apezpikuak 1604an Andagoira egindako bisitaren ondorioz bertako apaizari kristau dotrina euskaraz irakasteko ematen zaion agindua (*ibid.*, 46. or.).

Arkamo mendiaren hegoko isurialdean hasirik, Arabako hego-mendebaldeko alderdia erdalduna zatekeen Knörren arabera (1998: 8), eta horixe da, izan ere, Apraizek 1200 eta 1500 artean euskalduntzat hartzen duena. Hola bada, irudi du Gaubea gehiena ia

erabat hutsik gelditu zela, musulmanen inbasioak bultzatuta populazioak atzera egin zuenean. Ondoren, IX. mendetik, Valpuestako abade-etxe eta elizbarrutia ardatzat duela, alderdi honen birpopulatzea handituz doa. Orduan sortzen diren herrixketako toponimia gehienbat Gaztelako erdarari dagokio, eta honek adierazten du jende etorri berrien jatorria zein den. Leku izenen artean batzuek zuzenean birpopulatzaileen etorki geografiko edo etnikoari egiten diote erreferentzia; hau izango da, adibidez, Bascunuelas (*Basquiñuelas* orain) eta *Villanueva de Gallecos* (egun hustua) herrixken kasua, biak Erriberako artzapez-barrutian aipatuak, Calahorrako eta katedraleko kapituluaren arteko 1257ko itunean.

Pentsa daiteke birpopulamendu geruza goiztiar nagusiki erdaldun honen gainean, geroxeago, Arkamo mendiaz beste aldeko euskaldun komunitateak hegoko isurialdean hedatu zirela eta, honen ondorioz, toki izenetan aztarna utzi zutela. Izan ere, 1927 arte Lacozmonte udalerria osatu zuten herriek euskararen arrasto xume bat atxikitzen dute oraindik. Euskal leku izenak, kopuru txikitan izanagatik, Osma, Astúlez, Mioma eta Basaben entzun daitezke. Esanguratsua da azken herrixka honen antzinako deizioa *Comunión* izatea eta *Basabe* izena XII. mendearen bukaeran baizik (*Basave*, 1175) azaltzen ez hastea. Era berean, Gaubean bada euskal jatorria duen toponimoren bat, 1087rako lekukotzen den eta oraindik bizirik dagoen Villanuevako *Ibarra* adibidez.

Komunitate euskaldunen artean, hegoaldean, Trebiñu Konderria dugu, baina sartaldeko Burgeta, Pangua eta Argantzon (Uribarri Oka alkate auzoa barne) eremu erdaldunean sartu beharrak dira, etorki honetako toponimia gutxienez XVI. gizalditik nagusi ageri zaigunez gero. Mendebaldean, Erriberagoitiko udalerrian, *Anúcita* toponimo nagusia -*Anuntzeta* zen jatorrizko izena- salbuespena da, baina aurkintzen izenak erdaldunak dira argiro.

Hegoalderago, toponimiak Mijancas, Berantevilla eta Zambrana luzaz euskal eremuan egonak direla erakusten du, baina herri horietatik sartaldera erdararen nagusitasuna garbia da, ezbairik gabe Goi Erdi Aroan alderdi horretan izandako birpopulatze mugimenduen ondorioz. Testigantza garrantzizkoa da Donemiliaga Kukulako kartulario galikanoan azaltzen den Armiñón udalerriko Estavilloko 874ko gutuna, hor zenbait lagunek Leondik etorritako arbasoek oinordetzan utzi zizkieten bi elizen emaitza egiten baitute: *«de nostros avus habemus de Legione venerunt ibi»* (Ubieto 1976).

Jugalez ibaiaren arroko toponimian euskararen aztarna argia da, eta berebat Toloño mendilerroaren hegoko isurialdean, Ebro ibaiaren erriberaraino, hots, Gatzaga Buradonen, Bastidan eta baita orain Errioxakoa den San Vicente de la Sonsierra udalerrian ere. Eremu honetan bai toponimia historikoak eta bai egungoak euskal izen mordoxka aurkezten dute.

Gauza handirik esan beharrik ez dago Arabako erdialdeaz eta ekialdeko goiko alderdiaz, garbi dagoelako, Rejako datuek eta onomastikaren azterketak erakusten duten

## Arabako mugak Erdi Aroan




**Iturria:** Martínez de Madina eta González de Viñaspre 2012.

- Euskara
- Euskara erdararen presentziarekin
- Erdara nagusiki

bezala, euskaldunak zirela. Guztiarekin ere, Arabako Mendialdeko euskara - erdara mugak zein izan diren argitzeko dago; oraingoz dugun ustea da eremu horretako herri batzuetan euskara ez zela hizkuntza nagusia izan, zehazteko dagoen data batetik aurrera. Oteo, Antoñana, Orbiso (toponimia erabat euskalduna duen Haranaren ondoan da), Bujanda edo Genevilla herrietako toponimiak erdal izen asko erakusten ditu, inguruko herrietakoarekin alderatzen badugu. xiii-xvi. mendeetako dokumentazioan (Díaz de Durana 1995; Pozuelo 1998) euskal izen batzuk aurkitzen ditugu, hala ere. Santikurutze Kanpezuri Alfontso X.ak emandako foruan *Alcaçara*, *Arqueta*, *Sant Saluador de Galuarra*, *Sant Christoual de Berrauia* irakur daitezke, eta geroagoko agirietan *Helçar* (1313, Orbiso eta Oteo artean, Pozuelo 1998: 122), *Anunçieta* (1456, Orbiso eta Santikurutze Kanpezu artean; *ibid.*, 52. or.) edo *Arbuzcustiera* (1479, Harana eta Oteo arteko bideko mugarria). Guztiaz ere, erdarazko *val-, somo-, carrascal*, *hornillo*, *cañeja* eta *camino* osagaiak dituzten toponimoak ugariak dira.

Bestalde, alderdi honetako antroponimian, esaterako, Oteoko bizilaguna zen *Domingo Arana* (1313) dugu, Orbison bizi ziren *Gonçalez de Vrra*, *Pedro de Ezquerro* (1490, *ibid.*, 180. or.) eta Antoñanako biztanleak ziren *Pedro Arratia* eta *Juan de Ulibarri* (1484, *ibid.*, 170. or.). Horien aldamenean, dena dela, maiz *Calvo*, *Díaz*, *Fernández* eta *Ferrández*, *López*, *Remírez*, *Sancho* eta *Sánchez* lekukotzen dira. Harana ibarreko toponimia, aldiz, erabat euskalduna da eta, gainera, ezagunak dira euskal itzultzailea behar zela zioten xvii. mendeko zenbait agiri testigantza (Breñas & Otsoa de Alda 2002: 51-54). Zehazki esanda Atauri, Zekuñau, Korres, Kontrasta eta Uribarri Haranean behar zen itzultzailea denbora haietan.

### 1.3. Nafarroako muga

Ameskoagoienak eta Ameskoabarrenak euskaldun iraun dute xix. mende arte, eta orobat Allin ibarrak, Lanak eta Lizarraren inguruko beste haranek. Aguilar ibarrean, aldiz, ez dago euskal toponimo garbirik, menturaz *Garañango* herri hustuaren izena etorki horretakoa izan badaiteke ere, Cabredoko *Valdigorri*-ren bigarren osagaia edo Genevillako *Larrea* aurkintza izena bezala. Bujanda eta Cabredo - Genevilla artean *Munibaltza* (*Munibalça*) ageri da 1446an, eta Santikurutze Kanpezu eta Genevillaren arteko lurretan *Ibar* (*Yuar*) euskal toponimo garbia eta *Zerripuente* (*Çerrypuente*) itxuraz hibridoa zeuden 1481ean.

Berrotzan herri izen gehienek erdal erroa dute (*Acedo*, *Mirafuentes*, *Piedramillera*, *Ubago…*), baina *Mues* eta *Nazar*-ek euskal etorkia izan dezakete, eta *Cábrega* eta *Zúñiga*-ren bukaeran Euskal Herriko sartaldean dugun *-ika*-ren bertsio erromanizatua daukagu (Salaberri 2011a: 148-149). Bestalde, *Asarta* herri izena *Sorlada*-rekin (<

*Surlada* < *Suruslada*; *Suruslata*, *Surslata* ere agertzen dira) *Burlata* euskal aldaera *Burlada* erdarazkoarekin dagoen erlazio bertsuan egon liteke (ik. Mitxelena 1969: 31-32).

Zuñigako toponimia gehiena erdalduna da, baina izan dira, herriak Lana ibarrarekin batean ibiltzen zituen lurretan bereziki, euskal toki izenak, *Amalauta*, *Armorandieta*, *Atazabala*, *Berrabia* eta *Perriain* adibidez. Bestalde, Zuñigatik biziki hurbil, Arabako Santikurutze Kanpezu eta Orbisoren artean *Anunçieta*, *Aradury*, *Hamusco*, *Baube*, *Ryoharycho*, *Arryelle* eta *Arlyn* leku izenak ageri dira 1456-57an.

Berrotzako beste herrietan, Piedramillerako *La Erbea* eta *Mendierra* euskal toponimoak izan litezke, eta berdin Muesko eta Mendazako *Marana* (zabala eta erreka, besteak beste), lehen herriko *Lamiñarra* (honen dokumentaziorik ez dugu) eta Nazarko *Zarazu* edo *Zarazo*, baina horietaz lekora ez dago bertan euskararen aztarna askorik. Acedoko *Las Charas* eta Mendazako *El Ondalán* euskaratikakoak badira ere, irudi du hizkera arruntetik hartutako hitzekin moldatu toponimo berriak direla, tradizio handirik ez dutenak. Lehen herriko *Arbina* ere ('bide estua' berez), itxuraz bederik, euskal toponimotzat hartu beharko dugu, eta hain argia ez den *Unbera* ere etorki berekoa izan liteke.

Estellerriko Erriberan euskararen muga Ebroraino iristen zen Mendabia alderdian, inguru horretako aspaldiko leku izenek salatzen duten bezala. Adibidez, Arroizko *Almucacidorra*, *Almunçacidorra*, *Almunçaçidorra* toponimoek *Almuza* edo *Almuntza* izeneko herrixkara (hustua orain) zihoan bidexka izendatzen zuten, eta herrixkan berean Erdi Aroko *Aran Lucea*, *Arbigorria*, *Gurpideta* eta *Gayneco çauala* leku izenek garbi salatzen dute bertakoen hizkuntza euskara zela.

Alderdiko herri izen batzuek euskal etorkia dute eta, beste jatorri batekoak direnean, behin edo beste behintzat, euskarazko aldaera dute. Konparazio baterako, *Allo* euskaraz *Alu* esan izan dela badakigu, toponimia txikian *Alubidea* 'Alu edo Allora doan bidea' odonimoa Oteitza Iguzkitzaibarren oraindik bizirik dagoelako. Horretaz gainera, *Lopazketa* (herrixka despopulatua?) ere bazen inguruan, eta orain *Lazagurría* deitzen den herria *Elizagorria*, *Lizagorria* da lehen testigantzetan. Ebrotik oraino hurbilago dagoen *Mendabia* herriaren izena euskal etorkikoa ote den ez dakigu, baina bai euskaraz *Mendabia* erraten zela, Arroitzen *Mendabiabidea* izeneko aurkintza zegoelako. Gainera, *Arbeiça* dermioa genuen Mendabian berean XI. mendean, eta *Çumelz* bertan edo gertu XIV.ean. Eremu honetako *Villamezquina* herri orain hustua *Millamezquia* zen Arroitzen 1616. urtean, hots, etimoa erdarazkoa bazen ere herriaren izenak bazuen euskarazko aldaera, hizkuntza honetan ere ibiltzen zelako erakuskari garbia.

Hego-mendebaldean Iguzkitza Doneztebe ibarra euskalduna izan dela badakigu, Los Arcos eta Alloko mugan dagoen Arroizko *Ardantzegorria* edo *Ardantzagorria*, *Armukulla*, *Arrobia*, *Bustitza*, *Butzua*, *Eutzelatza*, *Galtzibar*, *Gazteluzar*, *Ibargun*, *Ibarrea*, *Iguraimendia*, *Jaun Done Miri*, *Kortabakoitz*, *Larrandia*, *Murua*, *Urgesal* eta beste

toponimo askok garbi adierazten duten bezala. Ibarraren hegoaldeko mugan dagoen Deikaztelun ere franko dira eta izan dira euskal toponimoak: *Argonga*, *Artabakoitz*, *Bizkarra*, *Ezkibel*, *Ibarluzea*, *Leortza*, *Urbaltza*, *Zabaltza*… Iguzkitzaibarren, bestalde, euskal toponimia ugaria da, ez neurri berean herri guztietan: *Ondarin*, *Beagin*, *Bortoba* (< **Bortoa?*), *Etxabarri*, *Eskilain*, *Matazarra*, *Mendigibel*, *Otxegia*… (Aberin), *Aizkibeleta*, *Arantzedia*, *Artabakoitz*, *Baltsaberria*, *Bazako dorrea*, *Beitilakarra*, *Bordaldea*, *Butzuandia*, *Epeloa*, *Eutzea*, *Gesaltzea*, *Idoia*, *Idoiberria*, *Iturtxipia*, *Korteberrieta*, *Mendibeltzu*, *Otazua*, *Zaldunbidea*… (Oteitza). Azken honetako lurretan *Baigorri* herri despopulatua dago, Aberin, Allo, Lerin eta Larragako mugetan.

Beherago, Allon *arta-* (*arte* zuhaitz izenaren elkarketako aldaera) izan lezakeen *Artauailla* toponimo menturaz euskaratikakoa dago 1371n (*Aiterbela* orain) eta *Begoliz* 1715ez geroztik (*Bigoliz* egun). Beste euskal toponimo batzuk ondokoak dira: *Ezkibel*, *Leortza* (*Leorza*), *Okarin*, *Zarapaiza* (*Orçalapayca* 1371n) eta *Valdeleorin*. Beheitixeago *Lerin* dugu, Malerrekaren zati bat izendatzen zuen *Santesteban de Lerin* deizioarekin bat datorren toponimoa; badaiteke bukaera, *Aberin*, *Lukin* eta *Morentin*-en kasuan bezala, *-ain* zaharrago batetik aterea izatea, baina ez dugu horren testigantzarik.

Toponimia txikiari doakionez, *Esparteta* dago herri honetan, baina, San Martin Unxeko toponimo homonimoan bezala, hemen erromantzeko *-eta* ikusi beharra dago, ez euskarazko *-eta* toki-ugaritasunezkoa, bien etorkia segur aski bera izanagatik ere. Lerinen eta Oteitzaren arteko mugan *Ezquive* azaltzen da 1758an, *Ezquibel* 1895ean, eta Lerinen berean *Ibargiza* (*Ybarguica*, *Ybarguiça*) dugu 1701etik, *Prado Garraza* 1712tik, eta orobat *Mendigaña*, baina hau 1902tik aurrera baizik ez.

Ekialdera eta beheiti joanez gero, *Sorbeta* (< **Soroeta*?) nahasgarria dago Funesen eta *Arteta* argia Azkoienen, euskarazko *ibai* hitzarekin zerikusia dukeen *Baiunga*-rekin eta bukaeran *ate* izan lezakeen *Parragate*-rekin batean. Toponimo hauek XVII-XVIII. mendeetarako ageri dira eta bizirik daude oraino. Goraxeago, Faltzesen, *Parragate*-z landara *Badañaga* eta *Burgaiz* ere baditugu, *Coballeta* (erromantze itxurakoa), *Olando* eta *Trambarría* zalantzazkoagoen aldakan. Ugaldean goiti Miranda Arga dago hurrena; hemen *Candaraiz* (*Araitz* da bigarren osagaia), *Barranco de Baialengua* eta *Biguria* daude, baina azken hau antroponimikoa izan liteke, 1708rako ageri bada ere.

Gorago, Berbintzanan, beste herri batzuetan ikusi dugun *Barranco de Baialengua* (*Badalengua* deitua orain) besterik ez dago. Hurrengo herria, Argan goiti joanda, Larraga da; honen izena euskararen bitartez azal daiteke, eta bertan bada euskaldun izandako beste herri anitzetan ere agertzen den *Nobeleta* toponimoa ('ardantze landatu berria dagoen lekua' edo), *Sausañe* ilunagoaren aldamenean. Aintzat hartu beharra da, puntu honetan, Larragak XIX. mendearen hasieran oraindik, hein batean bederik, euskaldun zirauen Artaxoa duela aurkezean, hurbil, Arga ugaldeaz haraindian.

Ibaian gora jarraituta, gain batean, euskal izen garbia duen *Mendigorria* dago, Garesko mugan, baina kokalekuagatik eta deizioagatik pentsa daitekeenaren kontra, *Muruzabal de Andion* (herri hustua) eta *Zabarate* baizik ezin ditzakegu euskaratikakotzat har; beste toponimo multxo ttipi bat (*Duiderra*, *(El)caralbe*, *Labase*) ilun ageri zaigu. Geroztik, irudi du erromantzearen eraginak Arga ugaldean goiti egin zuela, kontrako norantzean, Mendigorriraino. Garesek, berriz, euskaldun iraun zuen XX. mende arte, eta Bonaparte printzeak aukera izan zuen hango hizkera aztertzeko (ik. Ondarra 1982).

Ekialdean XIX. mende arte euskaldunak izandako Artaxoa (ik. Jimeno & Salaberri 1998) eta Orbaibar ditugu. Jakina den bezala, haran honetako zenbait herrik euskara atxikitzen zuten Bonapartek mapa ezaguna egin zuen garaian (1863an).

Puiuko mugan dagoen Tafallan, berriz, erdara izan da nagusi aspaldidanik, testigantza zaharrek eta toponimiak argi adierazten duten bezala, bertan anitz euskaldun bizi zirela segurua den arren. Euskal jatorria duten edo duketen toponimoen artean *Araitz*, *Beratxa*, *Galindarte*, *Garbizu*, *Larrain*, *Latrain*, *Makotxa* (Puiuko mugan), *Morreta*, *Putzilun*, *Valgorra* eta *Tafallamendi* ditugu, azken hau aspaldian galdua (ik. Jimeno 2006).

Tafalla, Orbaibar, Lerga eta Uxueren mugakide den San Martin Unx herriak ere aspaldi galdu zuen euskara, eta ezer gutxi da toponimian aurkitzen duguna; makurrago dena, kasuren batean ez dakigu izenak euskal etorkia duenetz: *Amustil*, *Arroia* (Oletako mugan), *Femate - Ferrate*, *Lakar*, *Monda*, *Txutxu* (Lerga eta Uxueko mugan), *Zaramendi*. Ondoko Erriberrin *Mendeondoa* da euskal erroa dukeen toponimo bakarra, irudi duen bezala *Mendiondoa*-tik atera bada. Beiren *Turbil* eta *Saimendia* ditugu, bigarrena bakarrik dokumentazioan, Uxuen ere erabiltzen den *Beskos*-ez eta San Martingo *Amustil* ilunez landara.

XIX. gizaldi arte Uxueko auzoa izandako Pitillas herrian *Mostrakas* (hiribilduko dermioa ere bada) eta *Chagunetas* ilunak daude, eta *Uartetxipia* argiagoa. Santakaran *Larrageta* (Uxueko aurkintza ere bada), *Mazkolanda* eta *Zabala* ditugu bizirik. Melidan *Aria* ilunkara dago, *Larraska* zalantzazkoa eta *Ordokia* argia, agirietako *Aldapea*, *Chicorayça* eta *Ordoquilanda*-z gainera. Traibuenasen *Río de Baiunga* dugu, eta Kaparroson hidronimo hori bera eta *Río Chavier* (cf. *Javier* < *Xaberri* < **Exaberri*).

Aragoa ibaiaren goitiko aldean, iparraldean dagoen Murillo el Fruto herriko agirietan bada euskal etorkia duen toponimo mordoxka bat: *Aitzurieta*, *Aldaiondoa*, *Andrenobia* (cf. *El Fosal de los judíos*, Murillon berean), *Andurkua*, *Areatzea*, *Arteko erregua* (eta *Erteko erregua* 'arteko erreka'), *Balsa de Laprimendia*, *Baratzealzinea*, *Baratzeberrieta* (*Barizibarretas*), *Baratzebideta*, *Baratzetako hodia*, *Baratzezarreta* (*Barazizartas*, *Barizizartas*), *Buztina*, *Esatea*, *Estigarra*, *Eutzea*, *Garipentzuko zaldu* (gogora bedi *Galipienzo* erdal aldaera, [l] duena, oraino bizirik dela Uxuen), *Larrega*, *Legazpea* (> *Legazpia*) eta *Legazpieta*, *Leskarbia*, *Luzazu*, *Mendi*, *Mendilatza*, *Mungalate*, *Penazuria*

edo *Peruzuria*, *Trankazarra*, *Uarte*, *Uartebidea*, *Uarteko hodia*, *Urtanda* eta *(U)xuebidea*. Ik. bedi orain Salaberri (2015a).

Murillo ondoan baina ugaldeaz beheitiko aldean dagoen Zarrakaztelu herriaren euskal izena Bardeara jaisten ziren Zaraitzuko eta Erronkariko artzainei esker gorde da, azken ibar honetakoen altxonbidea Zarrakaztelun barna igarotzen baitzen, eta Zaraitzukoena Murillon barna. Toponimo zaharretatik *Larrate*, *Mugarria* eta *Txindilamendia* oraindik bizirik ditugu, eta agirietan, aitzineko horiez landa, *Andrenitalarraña* (*Andreuitalarraña* irakurri beharra?, hots, *Andrebitalarraña?*), *Arrateburua* (*Larrateburua?*), *Artzizuloa* (*Arçiçuloa*), *Esatea* (*Essatea*), *Ollarzaldua* (*Oylarçaldua*), *Suduzandia*, *Zalduzaharra*, *Zandubilla* (< **Zaldubilla* 'zaldu biribila'?), eta *Zorzabala* ere azaltzen dira.

Goiti joanda, Kasedan *Balsa de Zaburria* da dokumentazioan aurkitzen dugun eta euskaratikakoa izan daitekeen -nahiz segurua ez den, jakina- toponimo (hidronimo) bakarra. Oibarren han-hemen errepikatzen den herriaren izenaz beraz gainera, *Artamendia*, *Bizkaia*, *Castildollate*, *Gabaran*, *Iparragerria*, *Iturri* (deitura?), *Jamenduriz*, *Kaskallua*, *Menditxuri*, *Pozoz*, *Soreta* eta *Txaparrandia* (hau Nardozekoa izan liteke) ditugu dokumentazioan, eta horietako batzuk oraindik ere bizirik eta onik daude (*Artamendia*, *Bizkaia*, *Gabaran*, *Menditxuri*…). Galipentzuri dagokionez, euskal toponimia ugaria da oraino, eta badakigu XVIII. gizaldiaren hasieran herria hein batean bederen euskalduna zela, euskara bizirik zegoela, Oibar haraneko beste herri batzuetan bezala (ik. Jimeno 1992 eta Salaberri 1994: 1093 eta hurr.).

Ibar bereko Bizkaiko Julion eta Gardelainen (husturik daude biak orain) jendea erabat euskalduna zen XVIII. mendean, hainbeste non Lergan sortutako Martin Pernaut apezak katixima euskaraz irakurri behar izan baitzuen lehenean, Julion, jendeak ulertuko bazuen; Eslaban ere bizirik zegoen garai hartan gure hizkuntza, aurkitutako dokumentuek frogatzen duten bezala, eta orobat Uxuen. Oibar ondoko Leatxen euskal toponimia izan da eta da nagusi, eta halaber Zaren, Ezporogin eta Morionesen. Badakigu Zarekoak XVII. mendean euskaldunak zirela, eta uste izatekoa da hizkuntza XVIII. mendean zehar ere atxikiko zutela, ez dakit noiz arte.

Beraz, aski muga argia azaltzen da Uxue, Galipentzu, Eslaba, Lerga, Bizkaia, Zare eta Leatxe euskaldunen eta Kaseda - Oibar erdaldunen artean. 1627an irunberriar batek garbi adierazi zuen Ledea, Esa, Zangoza, Rocaforte, Oibar eta Kasedan jendeek gaztelania besterik ez zekitela (Jimeno 1997: 133), eta leku izenek ere horixe adierazten digute. Oibar da ezbairik gabe, aipatutako herri horien artean, euskal toponimo gehien dituena, eta arrazoia da euskara ez hain aspaldi bertako mintzaira zela. Guztiaz ere, ez dugu pentsatu behar herri hauetan euskaldunik ez zela; Tafallan, Erriberrin, Tuteran eta bestetan bezala euskaldun multzoak bazeuden, baina ez ziren, oro har, ber-bertakoak, kanpotik, ondoko eta goiko herri-ibarretatik joandakoak edo haien seme-alaba eta ondorengoak baizik.

Ledean, Zangozan eta Esan biziki euskal toponimo gutxi ditugu: *Ugaste* hiruretan dago bizirik eta zaharra da; *Bustin* Ledeakoa da, baina, nonbait, euskaratik hartutako mailegua da, ez baitezpada aspaldiko izena. Herri berean *Laezeta* dugu oraindik eta agirietan *Ugarte*, *Huarte* azaltzen da (*Ugaste* gaizki irakurria ote da?). Bestalde, badirudi Leireko dokumentazioko *Oiarda* (901. urtea) Esatik hurbilxko zegoela (cf. *Bizkarda*, *Legarda*).

Goraxeago, Irunberrik euskaldun iraun du berandu arte; A. Irigaraik (1974: 97-98) herrikoek Leirera egindako erromerian izan zen liskarraren berri ematen du, eta haietako batek errandako *«indak honat makil hori, nik adituko diat fraide hok»* («eman iezadak honat makila hori, nik adituko ditiat fraide hauek») jasotzen. Irunberri ondoan den Urraulbeiti ibarra, Bonapartek mapa egin zueneko, 1863rako, erdaldundua zegoen, baina ondo-ondoko herriak, Itzagaondokoak (Indurain, Turrillas) eta Longidakoak (Artaxo, Mugeta) artean euskaldunak ziren, neurri batean. Jimenok (1997: 129) Artaxoko hizkeraren izpi bat ikusten den 1694ko gertakari hitsa biltzen du (*«jadanik badituk [adarrak] eta [gero ere] izanen dituk»*).

Ondoan den Erromantzatuak, izenak berak adierazten duen moduan, Urraulbeitik baino franko lehenago galdu zuen hizkuntza, baina euskal toponimia bada bertan, gehienik aipatu ibarreko mugan, Berroian eta Murillo-Berroian: *Xagues* (Adantsa), *Kanpulu - Kanpulo*, *Etxarri*, *Kapanola*, *Kotola*, *Murkilo*, *Sario* (Arbontze), *Aranandia*, *Arankoa*, *Areta*, *Axarizuloa*, *Buruntza*, *Itzaurraldea*, *Katola*, *Martiñena* (etxea), *Murlokoa*, *Pedrorena* (etxea), *Ugarron*, *Zaldua*, *Zorrotza* (Berroia), *Binabarri*, *Burgia*, *Larrañeta*, *Odieta* (Biotzari), *Bergua*, *Xagues*, *Kotola*, *Murkilo* (Domeñu), *La Hoya Makurra*, *Monteidorra*, *Ososki* (Isu), *Arandi*, *Auzalor*, *Etxarri*, *Labakia*, *Larrainburu*, *Larratza*, *Lizardoia*, *Lorgun*, *Xubingoa*, *Zokoa* (Murillo-Berroia), *Idokorri*, *Ugarra* (herri hustua) (Napal), *Ezkauria*, *Legarro* (Usun).

Nabaskoze inguruan ere euskal toponimoak badira, baina ez anitz, eta, gainera, oro har ez dira azaltzen errazak. Euskal izena duen Aizpurgin *Beloriz*, *Idokorri*, *Likarri*, *Luzugi*, *Ososki* eta *Urdantxi* ditugu orain, eta *Iguenç* dokumentazioan; Nabaskozen berean *Alzarri*, *Anzali*, *Arnali*, *Burreiz*, *Larbin*, *Legaroz*, *Monda*, *Ollate*, *Urdani* daude bizirik eta *Aranda*, *Biscasa* (eta *Benasa*; cf. *Esa* > *Yesa*), *Logasti*, *Mormela*, *Suscumas* azaltzen dira agirietan. Ustaizen *Atoski*, *Atxurri*, *Isusa* (*Ysusa* 997. urtean) ditugu, bai eta *Nascal* ere, *Naskari* deitua Zaraitzuko Galozen, biak segur aski aurreko **Nascali* batetik ateraiak (cf. *Igali* > *Igari* / *Igal*). Gazteluberrin harratea eta ibarra den *Ollate* besterik ez dago.

Bonaparteren 1863ko mapan Arrakasgoiti herria euskalduntzat agertzen da, baina ez Uskartzeko mugan dagoen Ustaize. Datu hauek eta toponimiarenak aintzat hartuz, erran daiteke hizkuntza muga luzaz Almiradioaren eta Zaraitzuren artean egon dela, aipatu bezala Arrakasgoiti ere euskalduna zela kontuan hartuta. Muga hau franko zaharra da;

## Euskararen hedadura xii-xiii. mendeetan




**Iturria:** Salaberri, *apud* Jimeno Jurío 1997.

badakigu XVII. mendearen hasiera-hasierarako hor zegoela (ik. Jimeno 1993), eta segur aski aise lehenago ere hor egonen zen. Beste horrenbeste erran daiteke Almiradioaren eta Erronkaribarren artean dagoen jauziaz.

Errandakoa mapa batean ezartzea ez da aise, baina, handi-handika eta larri-larria, uste dut Jimenok 1997ko lanean (61. or.) sartzen duenak ongixko islatzen dituela guk hemen aipatu ditugunak, egun dauzkagun datuekin Murillo eta Zarrakaztelu aldean euskararen marra hegoalderantz eraman behar badugu ere.

## 2. ERDI AROKO HIZKUNTZAREN DESKRIPZIOA

Hizkuntzaren berri ematera igaro aitzinetik, datuen iturriak aipatu nahi nituzke, gaingiroki eta zehaztasun handirik gabe baizik ez bada ere. Lehen-lehenik Nafarroako agiriak biltzen dituzten bilduma dagoeneko klasikoak dauzkagu: J. Mª. Lacarraren *Colección Diplomática de Irache (I)*, autore honek berak A. Martín Duque, F. J. Zabalo eta L. J. Fortunekin argitara emandako *Colección Diplomática de Irache (II)*, S. García Larraguetaren *El Gran Priorado de la Orden de San Juan de Jerusalén. Siglos XII-XIII. Colección Diplomática* eta *Documentos navarros en lengua occitana (primera serie)*, F. J. Zabaloren *El Registro de Comptos de Navarra de 1280*, A. Martín Duqueren *Documentación Medieval de Leire (siglos IX a XII)*, J. M. Jimeno Juríoren *Documentos medievales artajoneses* eta *El libro Rubro de Iranzu*, J. Carrascoren *La Población de Navarra en el siglo XIV*, I. Ostolazaren *Colección Diplomática de Santa María de Roncesvalles (1127-1300)* eta J. Goñi Gaztambideren *Colección Diplomática de la catedral de Pamplona. 829-1243*.

Iparralderako lanik garrantzizkoena E. Goihenetxeren 1966ko *Onomastique du nord du Pays Basque (XI$^{e}$ - XV$^{e}$ siècle)* izeneko tesia izan zaigu, aspaldi ez dela Euskaltzaindiak *Iker* bilduman berrargitaratua, X. Videgainen eskutik. R. Ciérbideren *Censos de población de la Baja Navarra* eta *Le Censier gothique de Soule* ere aipatu beharrak dira, bai eta, berebat, autore honen eta J. Santanoren lankidetzaren fruitu diren *Colección Diplomática de Documentos Gascones de la Baja Navarra (siglos XIV-XV). Archivo General de Navarra. Tomo I* eta *Colección Diplomática de Documentos Gascones de la Baja Navarra (siglos XIV-XV). Archivo General de Navarra. Tomo II* ere.

Euskal Herriaren inguruko agiri bildumak ere aintzat hartu ditugu, Mª. D. Pérez Soler-ek argitara emandako *Cartulario de Valpuesta. Edición Crítica* eta Donemiliaga Kukulako dokumentazioa biltzen duten Antonio Ubietoren *Cartulario de San Millán de la Cogolla (759-1076)* eta Mª. L. Ledesmaren *Cartulario de San Millán de la Cogolla (1076-1200)*. Orain García Andrevak (2010) egin duen monasterio horretako «Reja» delakoaren eta beste agiri askoren

transkripzioa ere erabil daiteke. Euskal Herriko datu franko jasotzen dituzten I. Rodríguezen *Colección Diplomática medieval de la Rioja. Tomo II: Documentos (923-1168)*, *Colección Diplomática medieval de la Rioja. Tomo III: Documentos (1168-1225)* eta *Colección Diplomática medieval de la Rioja. Tomo IV: Documentos siglo XIII* lanak ere biziki baliagarri izan zaizkit. Errioxako datu interesgarri anitz biltzen dituen Agustín Ubietoren *Cartularios (I, II y III) de Santo Domingo de la Calzada* liburua ere erabili dut.

Bestalde, Eusko Ikaskuntzaren *Fuentes documentales medievales del País Vasco* bilduman argia ikusi duten liburukiak ere onura handikoak izan dira niretako, bestela aski ezezagun izanen zitzaizkidan Hegoaldeko Erdi Aroko datuak erabiltzeko aukera eman didatelako. Orain, gainera, sarean daude eta euskarri digitalean jaits eta erabil daitezke. Dena dela, aipatu liburuki horiek erabat zukutzetik urrun nago, hots, lanotatik askoz ere datu gehiago atera daitezke, eta Erdi Aroko euskara hobeki ezagutzeko baliatu. Bukatzeko, ezin aipatu gabe utzi K. Mitxelena maisuaren lan ugari-bikainak (ik. bibliografia), batez ere *TAV*, *FHV* eta *AV*.

Grafia kontuez ere ohar batzuk egin nahi nituzke, aurrerago ere, atalño batzuetan, berriz honetaz mintzatzen naizen arren, neurri batean bederen. Mitxelenak zioenez (1968: 474), lan zehatz eta kritikoa egin beharra dago arlo honetan, ondorio faltsuak saihesteko. Bokalen arloan arazo handirik ez dugu opatzen, baina aintzat hartu behar da zenbait aldiz dokumentazioko <j> eta <v> egungo <i> eta <u>-ren ordez daudela.

Besterik da elkarren aldamenean idatzita dauden bokalen artean loturarik bazenetz jakitea, alegia, hiatoan zeuden ala diptongoa osatzen zuten, batez ere beheranzkoa izan zitekeenetan, baina ez bakarrik hauetan. Behin edo beste <h> tartekatzen da, bokalak bereiz irakurri edo ulertu behar zirela adierazteko edo, baina hau ere artetan engainagarria da. Adibidez, Arabako *Zalduondo* herri izena Erdi Aroan franko aldiz *Zalduhondo* idatzirik opatzen dugu, seguruenik *h* ebakitzen zelako, baina 1447ko *Zalduhendo*-ko tarteko <h> horrek zer funtzio duen ez da garbi ageri, inertziazko, tradiziotik heldu den zerbait ez bada, erromantzez *Zalduendo*-k duen [we] erdiesteko [wo]-tik abiatu behar baitugu, ez [uho]-tik, eta neke baitirudi [uhe] ahoskera ere bazela onestea.

Kontsonanteetan, arazo latzena segur aski txistukariek sortzen digute, arlo honetan «inguruko» erdarak guretik urrun daudelako, batez ere latina eta gaztelania; Nafarroako erromantzean izkiriatu agirietan hobeki islatzen da ebakera arrunteko afrikatu lepokaria ([ts] <tz>), eta are hobeki okzitanieraz idatzitakoetan. Beste gisan, ez da aise izaten <c>, <ç>, <z>-ren azpian zer dagoen xuxen jakitea, non eta Erdi Aroaren ondoko edota egungo ebakera ezagutzen ez den.

Gauza bera erran daiteke <ss> digrafoaz, batzuetan gaur <s> idazten duguna adierazten baitu, eta beste batzuetan <ts> ematen dugun haren aldaera afrikatua. Arlo honetan, lagungarriak izaten dira grafia aldizkatzeak, adibidez toponimo edo item onomastiko

berean batzuetan <ch> eta besteetan <c>, <ç> edo <z> kausitzea, honek azpian gaur <tz> idazten dugun afrikatu lepokaria dagoela ematen baitu aditzera.

Kontsonante aitzinean aurkitzen dugun <x>-k, berriz, egungo ortografia batuan bezala, [ʃ] sabaiaurreko ahoskabea adierazi ohi du. Bestalde, hitz bukaerako <s>-k zer irudikatzen duen jakitea gaitz da, geroagoko eta oraingo ahoskera ezagutu ezean: [ś] izan daiteke, baina [ć] ere bai, eta inoiz [s]-ren ordainetan ere agertzen da. Egungo euskara orokorrean ohikoak diren neutralizazioei ere begia atxiki behar zaie, item onomastikoek eta testu zaharrek ziria sar diezaguketelako, gutien ustean. Erraterako, *n*-ren ondoan bai Landuchiok eta bai Leizarragak *z*-ren aldeko neutralizazioa erakusten dute, ez egun ohikoa den *tz* afrikatuaren aldekoa (Mitxelena, in Agud eta Mitxelena 1958: 21).

Ikusten den bezala, arazo latzak ditugu txistukariak behar den moduan ulertzeko, eta gauza bera erran daiteke euskara batuan <tt> idazten dugun soinu sabaikariaz, jakina denez inguruko erdaretan ez baita eta ez baitzen holakorik. Beraz, maiz ez dugu jakiten, soinu bustia dagoela argiro salatzen duen <ch> / <t>-ren erako txandakatzea gertatu ezik, komunzki <t> idazten den horren azpian soinu palatala dugun edo ez-palatala; hemen, jakina, zer hitz den ikusi beharra dago, soinu palatala kasu jakin bakan batzuetan baizik ez baita agertzen. Bestalde, eta sabaikariekin jarraituz, frankotan <in> edo <yn> multzoak erabili izan dira sudurkari palatala emateko, eta <il> edo <yl> alboko sabaikaria irudikatzeko. Horregatik, gure aitzinean Erdi Aroko edo XVI-XVII. mendeetako datuak ditugunean, ez da beti erraza grafema horiek xuxen zer adierazten duten jakitea.

Ez dut hemen buruan buruko grafia-azterketarik egin gogo, bistan da, baina arazo-emaile handi den <h> grafemaz ere zerbait erran nahi nuke, datuen interpretazio zuzenerako munta handikoa baita, alegia, txoil garrantzizkoa baita euskararen historia behar bezala ulertzeko. Garbi dago askotan <h> etimologikoa dela eta grafemak ebakitzen zen soinua irudikatzen zuela; hau agerikoa da, erraterako, lan honetan hainbeste aldiz aipatzen den «Donemiliagako Reja»-ko toponimoetan.

Nolanahi ere, badirudi <h> zenbait aldiz inertziaz ere idatzi izan dela, tradizioaren eraginez, honek anitzetan iturri fonologian badu ere, hau da, [h] soinuan. Beste batzuetan aski halabeharrekoa zen <h>-ren erabilera, eta, erraterako, diptongo baten barnean aurki dezakegu, dakigunez sekula [h]-rik izan ez den testuinguruan (*Ochoa de Jahuregui*, 1464), edo hasperenik izan ez duten hitzetan (*«Martin de Hechaguen, padre del dicho Martin de Hechagoen»*, A, 1499). Bokalen artean ere behin baino gehiagotan kausitzen dugu <h>, inolako euskarri fonologikorik gabe, oinarri falta hau beti segurua ez den arren: *Mohez* (1052-54) eta *Muez* (1054), *Oiuarr* (1072) eta *Ohibar* (1076), baita erdarazko hitzetan ere (*posehe* 'posee' 'badu' espainolez, kasu; G, 1479).

Ardura *u* aitzinean edireten dugu *h*-, hura bokala zela adierazteko, beste gisan, gorago erran den bezala, *u* [b] edo [ß] irakur baitzitekeen. Argibidez, *Uarte* (c. 1039)

nafar herriaren izena [barte] irakur zezakeen hemengoa ez zen batek, eta hori saihesteko *Huarte* (1015, 1039) izkiriatzen zen, edo *Uharte* (1015), *Vhart* (c. 1039). Azken bi idazketa hauetan, ordea, <h> grafema [h] ebakeraren ispilu ere izan zitekeen, ez kontu grafiko hutsa. Bada saltsarik aski, hortaz, aspirazioaren inguruan.

### 2.1. Fonetika-fonologia

#### *2.1.1 Bokal, diptongo eta hiatoak*

Atal honetan euskal bokalen, diptongoen eta hiatoen garapenaren inguruko gai batzuk ukitzen ditut, betiere, eta erran bezala, Erdi Aroan aurkitu ditudan onomastika datuetan oinarriturik. Sinetsirik nago izen gehiagoren azterketak hemengo emaitzak osatu, ñabartu eta, segur aski, aldatuko dituela, baina, zernahi gisaz, aintzat har beza irakurleak lan honetan ageri direnak espero genituenak direla, hots, Mitxelenak batik bat, baina baita beste ikertzaile batzuek ere aipatu dituzten gertakari fonetikoak direla. Lot nadin, bada, arlo honetako aldakuntzak aztertzeari:

*-aa-* / *-a-* (elkar.). Abiapuntuko *-aa-* jatorrizkoa izan daiteke, baina lehen soinu irekia beste bokal bat elkartuko lehen osagaiaren bukaerako lekunean irekitzearen emaitza izaten da usu: *Orti Donamaria Aldeco*, *Sanso Lavaldeco* (N, XIII. m.), *Soracoiç* (N, 1229), *Olaga* (N, 1232), *Meçaalorr* (N, 1290), *Garcia Echandico* (N, 1366), *Olaaran, Longaarte* (eta *Longa*, B, 1388), *Pagalde*, *Pagalda*, *Pagaldaçubi* (G, 1479).

*-a + -a > -aja: «los setos biejos, a que llaman en basquençe mugaja»* (G, 1479). Cf. ekialdeko *ateraia*, *botaia*, *goraia*, *gostaia* eta beste.

*-a + -a > -ea: Elhorzahea* (A, 1025), *la ferrerya de Goycoolea* (G, 1465). Mitxelenak (1971a: 246), hala ere, Arabako *-agea* (< *-aga + -a*), *-etea* (< *-eta + -a*) aipatzean erraten du itxuraz berriak direla, eta 1025eko *Elhorzahea* sobera bakartua dagoela eta hutsa izan litekeela. Manterolak (2015) *Morebiribilea*-n den moduko gertakaria dakusa. Nolanahi ere, Errioxan *Garci Olhea* ageri da 1156. urtean eta, beraz, Rejakoa testigantza bakarra ez dela garbi dago.

*-a + -e, -he > -ae-, -e-: Mariaeta* (A, 1025) > *Marieta* (1257), *Zornoztaegi* (A, 1025) > *Çorneçtegui* (1257), *Sagassaheta* (A, 1025) > *Sagasseta* (1257), *Mugaeta* (N, 1235) > *Mugueta* (1268), *Sustaeta* (G, 1397), *Ascaeta* (G, 1436), *Yraeta* (G, 1453). Perez Lazarragak, 1600 aldean, *Oçaetaço bandereagaz* idazten du.

*-a- / -e- / -je-: Zaricagui* (N, 1142), *Çariquegui* (1227), *Çeriquegui* (1280), baina *Çariquiegui* (c. 1200, 1268, 1362), *Zariquiegui / Zarikái̯* (ahozko aldaera) orain.

*-ae(-) > -ai̯-* eta *-e-: Hiraszaeza* (A, 1025), *Iruraez* (1456), *«Yrurayzco hermandadean»* (Perez Lazarraga, c. 1567), *Iruraiz* (egun), baina *Hamaezaha* (A, 1025) > *Ameçaga* (1257).

*-aha-* > *-aa-* > *-a-* (elkar. edo hitz barruan): *Berrio Zahar* (N, 1032) > *Verrioçaar* (1249), *Larrainçarr* (N, 1225), *Legarçaarra, Legarçarra* (B, 1388), *Laarregui* (G, 1401), *Gaztannahandieta*, *Gaztannaandieta* (G, 1479).

*-ahia* > *-aja: Vici Naya* (N, 1125-1135), *Uicinaya* (G, 1203).

*-ai̯-* > *-a-*. Sintagma deklinaturik dagoenean kausitzen dugu, artetan: *Blasco Ariamango* (*Ariamain*, N, 1111); *Orti Sansoango* (N, 1226), baina *Sanssoayn* (1268, 1283), *Antsoain* / *Ansoáin* orain.

*-ai-* (big., elkar.) > *-ai-*, *-ai̯-*, *-a-: Eçkiasso Ata Iria* (N, 1074) eta *Exquiasso Atari* (N, 1054-1076), *Lope Gorrtari* (N, 1366; cf. *Perosanz gortayri*, N, 1539), *Blasco Lauayri* (N, 1366).

*-ai̯-* > *-ai̯-* (eusk.), *-e-* (erd.): **Ustaiz(e)* > *Ustaize* (eusk.) / *Ustes* (997, 1064), *Ustés* (gazt.).

*-ai̯-* > *-ai̯-*, *-ei̯-*. Multzo honetan Zuberoan *-aine*, *-eine* (ofizialki *-ein*) eta Nafarroan *-ain* duten toponimo guztiak sartzen dira: *Domintxaine*, *Garindaine*, *Gotaine*, *Ozaraine*, *Ündüreine* lehen herrialdean, *Barañain*, *Gartzain*, *Paternain*, *Zurikoain* eta beste bigarrenean.

*-ai̯-*, *-jai̯-* > *-ja-*, *-je-*, *-ie-*, *-i-: Gorozain* (N, 1064), *Goroçiayn* (1366), *Gorocian* (1210), *Goroçin* (1233), *Goroçien*, *Gorocien* (1251, 1257), *Grocin*.

*-ai̯tz-* > *-atx-: Juan Lopes de Acha* (B, 1478). Hala ere, toponimoa *aitz* > *atx* pausoa emana zegoenean sor zitekeen. Ik. *-ei̯tz(t)z-* > *-e(t)x-*.

*ai̯z-: Sancius Ayzpurucoa* (N, 1226), *Hayzpuru* (G, 1373), *Haiztondo*, *Aiztondo* (G, 1464).

*ai̯z-* > *ai̯x-* > *ai̯s-: Haiztara* (A, 1025) > *Ayxtara* (1257) > *Aistria*, *Aystray* (1740), *Aystara*, *Astrea* (1845). Toponimia txikian *Aistramendi*, *Aistrarrate* dauzkagu.

*-ai̯z-* > *-ax-*: *Haizcoeta* (A, 1025) > *Axquoeta* (1257), *Escota* egun gaztelaniaz; *Narbaiza* (A, 1025), *Narbeiza* (1060), *Naruayxa* (1257), *Narruaxa* (1305), *Narvaxa* (1496).

*-ana (> *-ā̃h̃ā̃)* > *-a: Paterniana*, *Audicana* (1025), baina *Baternia* (1232) eta *audicarra* 'audikarra, Audikakoa' Perez Lazarragaren izkribuetan (XVI. m).

*-ano- (> *-ā̃h̃ō̃-)* > *-a-: Uillanoua* (N, 1015) > *(*Billā̃h̃ō̃ba >) Villaua* (1184). Etimoa *Billánoba* ebakiko zen, egun *Villáva* baita.

*-ao-* (elkar. eta eratorpenean) > *-ao-*, *-o-: Bagaola* (N, 1110, 1259), *Olaoz* (NB, 1208), *Arriluçaondoa* (N, 1232), *Eliçaondo* (N, 1366) eta *Eliçondo* (1427), *Ollaoqui* (G, 1391, 1483), *Artaondo*, *Vrdaola* (B, 1457). Iduri luke Euskal Herriko erdi-sartaldean *-ao-* multzoa luzazago atxiki dela, gainerako lurraldeetan baino: *Pedro de Ollaoqui* (G, 1500), baina *Pedro de Olloqui* 1504rako.

*-au̯-: Laurendi* (N, 1196), *Auru* (N, XIII. m.), *Laurenz* (N, 1224).

*-au̯-* / *-a-: Mauruate*, *Mauriate*, *Maruate* (G, 1482).

*-au̯-* / *-ai̯-*: *Mauruburu*, *Mayru Mendia* (N, XIII-XIV. m.).

*-e* > *-ø* (elkartuaren lehen osagaiaren bukaeran eta, orduan, *-r* > *-l)*: *Udal ondoa* (N, XIII. m.), *Joal Eguieta* (N, 1284), baina *Tolarguibele* (G, 1479), segur aski *l - l - l - l* segida saihesteagatik.

*(-)e- > -a- / –rr* (behin edo beste, *berri > barri*-tik kanpo): *Ulibarrilior* (A, 952); *Arlategui* (N, 1111) eta *Erlategui çavala* (N, 1233); *Arlegui*, *Arlagui* (N, XII-XIV. m.), baina *Erelegui*, *Herleghi* ere bai, garai berean.

*-e > -e*, *-a* (elkar. eta eratorpenean): *Ataondo* (N, 1024), *Atahuri*, *Artazaha*, *Essauarri*, *Otazaha* (A, 1025), *Vrdabide* (G, 1141-1142), *Etsevacoiz* eta *Echavacoiç* (N, 1212, 1213), *Ariz Meaca* (N, 1284), *Hurdaoxynaga* (B, 1398), *Bidaberrieta* (G, 1482), *Vlalarrineta* (B, 1490).

*-e + a-> -ea-*, *-a-: Andre Ansa de Çeberyo*, *Andrransa de Çeberyo* (B, 1464).

*-e + -a > -ea*, *-eja: Faranlucea* (Burgos, 947), *Haraluzeia* (1068), *Faranluceia* (1077), *Franlucea* (1176), *Froncea* orain; *Urdinçaqui Bereya, Arburua Bereya* (N, 1284).

*-e + -e > -ee- > -e-: Arteeta* (N, 1087) eta *Arteta* (1145, 1186), *Olaluzeta* (B, 1393), *Unanbidegui*, *Heguiluzeeta* (G, 1451-1452), *Yrularreeta* (G, 1445), *Bidaçuruçeeta* (G, 1497), *Elgueeta*, *Elgueta* (G, 1493).

*-e + -e > -ie- (-je-?): Vbelcieta* (N, 1072), *Ibízta* (eusk., ahoz) / *Ibilc[j]éta* (gazt.) egun, *Hegaurrieta* (G, 1345; bigarren osagaia *aurre* bada eta ez *urri*).

*-e + -(h)o > -eo-: Careoviaga* (G, 1394).

*-e + u- > -eu-*, *-u-: Andrumea* (N, 1294), *Andreumea* (N, 1350).

**-eano- > (*-eã̄h̃õ >) -eao- / -eo-: Meao(t)z*, *Meaoç* (N, 1174, 1270, 1366) / *Meo(t)z* (1197, 1198, 1280…), *Meotz* / *Meoz* gure egunotan.

*e(h)i- > ei-*, *ei̯- > i-: Eizco* (N, 1056), *Eyçcoa* (1284), *Yzco*, *Izco* (1268, 1280); *Ehizcue* (1124), *Eizcue*, *Eyzcue* (1116-1122, 1350), *Izcue* azken mendeetan.

*-ei̯- > -e-: Pero de Areyzcorreta*, *Garçia de Arezcorreta* (G, 1374).

*-ei- > -ei-*, *-ei̯-*, *-i-* (elkar.): *Elorçeibar* (N, 1095), *Açeari Guruciricoa* (N, XIII. m.). Hitz barnean ere ageri da: *Hereyue* (A, 1257), *Hereydee* (1295), *Eribe-* eta batez ere *Eriba-* euskal toponimian, *Eribe* gaur egun (ik. Salaberri 2015b: 173-174 eta 411).

*-ei̯- / -i-: Lizarraga* (N, 928); *Liçarra* (1024), *Liçarrara* (1024, 1058, 1063, 1066) eta *Leiçarrara* (1074; *Estella-Lizarra* egun); *Leyçarduya Cilueticoa* (N, 1110), *Liçarce Iradoya* (N, 1284), *Leyçarralde* (G, 1391), *Liçardi* (G, 1479).

*ei̯he- > (-)eje-*, *ihe-*, *ie-*, *je-: Lauça Egera* (N, 1096), *Eyereta* (N, c. 1180), *Negueyereta* (N, 1290), *Iherategui* (G, 1394), *Yeraçarreta*, *Yheraçarreta*, *Yheraçaharra* (G, 1479).

*-ei̯(t)z- > -e(t)x-*: *Arechaualaga* (B, 1376), *Arechederraga* (B, 1347), *Lejardi* (B, 1398), *Urrejola* (B, 1392), *Helexalde* (B, 1470), *Urrextuy erreca* (G, 1476). Hemen, jakina, toponimoak sortu zirenerako hitzak *aretx*, *elexa*, *lexar* eta *urretx* zirela kontu egin daiteke.

*(*)-ena- > (*-ē̄h̃ã- > -eha- >) -ea- > -a-: Aceari*, *Açeari* (N, 1094, 1119), *Azari* (N, 1103, 1111), *Azeari* (L, 1249), *Aceary* (NB, 1412-1413); *Guendearia* (N, 1196), *Guendaria* (1289). Ik. Mitxelena (1969: 38).

**-ene- > (*-ẽ̄h̃̄ẽ̄- >) -ehe- > -ee- > -e-:* *Beeriang* (N, c. 1097), *Beherian* (1110), *Beheriein* (1174, 1197, 1202), *Veeriayn*, *Beeriayn* (1254, 1276), *Beriayn*, *Beriain* (1350, 1366), uste dudan bezala *Venerius* antroponimotik eratorri behar badugu.

*euC-* edo *eu̯C- > uC-:* *Eurtupiana* (A, 1025), *Urturpina*, *Urtupinna* (1257), *Urtupiña* (azken mendeetan).

*-i- > -ø-* (elkartuen lehen osagaian eta eratorrietan): *Arzubiaga, Arbelgoihen* (A, 1025), *ual de Elorçe* (N, 1067) edo *Elorçeibar* (N, 1095), *Berascoayn Arraldea* (Aldude, 1284), *Arrate* (G, 1348), *Açaldeguy* (G, 1349), *Sarralde* (G, 1391).

*-i-* (elkartuaren lehen osagaiaren bukaeran): *Arrigorriondo* (Erroibar, 1071), *Iturriozagua* (G, 1141-1142), *Arrigurenaga* (B, 1393), *Yturriçuria* (G, 1479).

*-i > -e* egin da zenbait aldiz dokumentazioan eta gure herri izenen aldaera ofizialetan, joera erdaltzalea beti nagusi atera ez bada ere: *Arcaut* (A, 1295, 1320), *Arcauti* (1529), *Arcautirabidea* (1749), *Arcaute* egun (gazt.) eta agirietan. Nabarmentzekoak dira 1295eko dokumentuan ageri diren Arabako zenbait herri izenen aldaerak: *Jauregue*, *Hollivarre*, *Dulance*, *Echavarre de Viña*.

*-iano > (*-iã̄h̃̄ȭ > *-ĩ̄ao >) -io: Guzkiano* (A, 1025) > *Uzkio* (euskal toponimia), *Otxandiano > Otxandio* (B), *Undiano > Undio* (N) bezala. Etorki *-ianu*, *-iano* duten toponimoetan *-io* izaten da emaitza, baina batzuetan bada *-iu* (N, *Çandiu* 1366, *Zandio* orain) eta *-iau̯* edo *-jau̯* (*Kerrianu* 1025 > *Gerriau* 1713 eta egun, A).

*-iano > (*-iã̄h̃̄ȭ> *-ĩ̄ao >) -ĩ̄o / -iño > -iño:* *Avadiano* (B, 1277) > *Avadinno* (1462) / *Abadio* (**Abadĩ̄ȭ* segur aski; 1495) > *Abadiño*.

*-ihi- > -ii- > -i-: Hiiza* (N, 1066, 1080), *Yiza* (1079), *Ihiza* (1124, 1189), *Itça* (*Irça* transkribatua, 1125-1135), *Yza* (1192).

*-i + i- > -i-* (elkar.): *Zubiria* (N, 1040), *Mendilarsua* (A, 1464).

*-o* (elkartuaren lehen osagaiaren amaieran): *Sorozabal* (N, 1080), *Bagoçuloaran* (Aralar, XIII. m.), *Pagobacoyçaga* (G, 1401).

*-o > -a* (elkartuaren lehen osagaiaren akabailan): *Ozzaburu(m)* (N, 1042; zaldi baten izena da, segur aski egun *otsaburu* idatziko genukeena), *Sorhapuru* (BN, 1150-1167), *Astalarraça* (G, 1349), *Çoçaberro*, *Soracho* (G, 1479).

*o-* (eusk.) / *we-* (gazt.): *Oto et Oto* (1025), *Oto de Yuso*, *Oto de Suso* (1257), *Hueto de Yuso, Hueto de Suso* (1295). Euskal toponimia txikian *Otorabide* dugu 1712an eta *Otuarte* egun.

*-oa > -oa*, *-ua* edo *-wa: Mutiloa* (N, 1002, 1067, 1135-36), *Mutilua* (1203); *Aluerta Bargoa*, *Sancho Periz Bargua* (N, 1330).

*-o + e- > -oe-* (elkar.): *Aysoroechea*, *Ausoroechea* (G, 1479).

*-oe-* (lehen edo big.) > *-ue-* edo *-we-:* *Zuloeta* (N, 1067, 1095), *Çuloeta* (1083-1120), *Zulueta* (1280, 1532); *Ybargoen*, *Ybarrguen* (G, 1370, 1372).

*-oi-* > *-ui-*, *-wi-* (> *-u-*, elkar.): *Ariztuia* (N, 1042), *Isastugoiena* (N, 1249), *Urdinçaqui Urriztuya* (N, 1284).

*-oi̯ + C-* > *-oC-* (elkar.): *Idosarria* (N, 1197), *Ariztoguenaga* (G, 1433).

*-oi̯tzV-* > *-otxV-: Amesbacochaga* (B, 1347).

*-on > (*-one > *õh̃̄ẽ >) -oe (> -oi̯): Montdragon* (1260) > *Mondragoe* (xv. m.), *Morroe Çuria* (G, 1447), *Peyllon* > *Poyllon* (Donostia, 1342) > *Polloe* (1814 eta egun).

*-ona- > (*-õh̃̄ã- >) -oa- > -o-: Taxonare* (N, 1002), *Tassoare aguerrea* (1597), *Tassoare aguerria* (1605), *Tasore bidea* (1793).

*-ona > (*-õh̃̄ã > *-oa >) -o: Aramayona* (A, 1457), baina *Aramaioco contrara* (1443), *[Ar]amayo* (1448), *Martin de Aramayo* (1497).

*-o + o- > -oo-: la ferrerya de Goycoolea* (G, 1465).

*-o + u- > -o-* (*Hobecori*, 1025), *-ou-* (*Ouecouri*, 1110), *-u-* (*Ouecuri*, 1332, *Obekuri* egun, Trebiñu).

*-u* > *-a* (elkartuaren lehen osagaiaren amaieran): *Çaldaburu Larraçea* (*zaldu*, N, 1226), *Mirateguieguia* (*miru*, A, 1481), *Bolaburu* (*bolu* 'errota', A, 1499).

*-u* > *-u* (eusk.), *-o* (gazt.): *Agellu* (1025), *Aguellu* (1257), *Agiello* (1415), *Aguillu* (1551), *Aguillo* gaztelaniaz, *Agilu-* euskal toponimian (latineko *ager* 'alorra, landa' izenaren *agellu* txikigarria da etimoa). Arabako *Zuhatzu* herri izenek *-u* izan dute berandu arte (*«Joan Lopez jauna Çuaçuco»*, *«Christobal jauna Çuaçuco ene adisquidea»*, Perez Lazarraga, c. 1600), baina azken gizaldiotan *-o* ohi dago, dokumentazio ofizialean.

*-ue-* edo *-we-* > *-u-: Muezqui* (N, 1055) > *Muçqui* (1273-1274), *Muzki* egun.

*-u + ho-* > *-uho-* > *-uo-* (eusk.), *-we-* (gazt.): *Zalduhondo* (1025, 1351), *Çalduendo* (1216), *Zalduendo* (1332), *Çalduondo* (1429), e.a. Ik. Salaberri (2015b: 392-393).

*-uhu-* > *-uu-* > *-u-: Vhulla* (A, 1025), *Uula* (1257), *Uhula* (1258), *Ula* (1393).

*-ui-* edo *-wi-* (lehen edo big.) > *-i-: Hollarruizu* (A, 1025) > *Olarizu* (1135), *Ossuynaga* (N, 1239) > *Osinaga*, *Ossinaga* (xiii. m.), **Funica* > *Fuica* (B, 1384), *Fuyca* (1587) > *Fica* (1796).

Bokal asimilazioa ere frankotan aurkitzen dugun gertakaria da; besteak beste, bateratze hauek ditugu: *a - a - e > a - a - a* (*Lanbarrengarata*, G, 1470, baina *Bayringarate*, *Vayringarate*, leku berean, 1495), *e - o > o - o* (*Erdongana* 1025, *Erdoñana* 1453, *Erdoña* 1475, *Ordonnana* 1156rako, *Ordoñana* hondar mendeetan), *i - u > u - u* (*Miguel d'Uzpura* NB, 1273; *Indurayn* baina *Miguel de Undurayn*, N, 1366; *Çuçurquill* G, 1464. Gehienak kasu puntualak direla dirudi; salbuespena Zuberoako *Ündüreine* da, *Indurey*, 1327, 1337), *o - e > o - o* (N, *Orqueien* c. 1032, *Miquelis Orqueienco* 1226, baina *Orquoien* 1192, *Orcoien* 1274, *Orkoien* egun), e.a. Kontrako gertakaria ere, disimilazioa, ohikoa da: *Mizkina* (A, 1025) > *Mezquina* (1156) > *Mezkia* (euskal mikrotoponimian

eta orain); *Albiniz* (A, 1025, 1232), *Aluiniz* (1257), baina *Alueniç* (1062), *Albeiz* (eusk.; *Albeizbidea*, *Albeizmendiostea*, 1625), *Albéniz* (gazt.).

Metatesia ere opatzen dugu inoizka: *Abulanga* (1025), *Aulanga* (1257), *Alangua* (XVIII. mendetik hona, A). Metatesia dagoke, orobat, Nafarroako XIV. mendeko herri otoitzeko *arguiçagui eraiçeten*-en, irudi duen bezala, **eraçeiten*-en moduko forma batetik atera bada, *erazegi*-tik alegia, bokalarteko *-g-* erori eta ondoan (aldera bedi XVIII-XIX. mendeko Artatzako euskal testuko *eregui* 'eraiki' baina *ereitea* 'eraikitzea'-rekin).

Bokalaren erortzea elkarketan aurkitzen dugu, jakina: **Uhulasarri* > *Uhulsarri*, *Uhusarri* (1393) Araban. Nafarroan, azentuagatik, ongi ezaguna da sinkopa: *Oreriuia* (1043) > *Ororibia* (1073) > *Ororbia* (1126), ezbairik gabe **Orórìbia* ebakitzen zelako, *Orórb[j]a* orain erdaraz; *Ariztaregi*, *Ariztarai* > *Arístregi*, *Azterain* > *Asterain* > *Astráin*, *Estelaba* > *Eslába*, *Ezporogi* > *Ezprógi*, *Geretz* > *Gréz*, *Gorozin* > *Grócin*. XIV. mendeko nafar otoitz herrikoian *apostru* aldaera ustez sinkopatua dugu, *maestru*-ren aldakan (cf. «*Bienes de Apostru* [...] *Bienes de Juan Ochoa Apostru*», B, 1510/1556).

Anaptixia ere behin baino gehiagotan edireten dugu Erdi Aroko izenetan: *Burutain* (N, 1195, *Brutus*), *Carasta* (A, 1025, 1257, Mitxelenak dioen bezala **Crasta* < **Castra*-tik atera bada), *Eneco Betiriz* (N, XIII. m.), *Pedro Ezquerra Maesturua* (N, XIII-XIV. m.), *Miguel Periz Guiristiona* (N, 1366), e.a.

Behin edo behin sudurkari baten ondoan *o* > *u* hesketa gertatzen dela dirudi: *Argumaniz* (A, 1025, 1256), *Argomaniz* (1257, 1295), *Argomas-* euskal toponimia txikian, *Larriun* (1240), baina *Larrion* (XIII. m.). Arabako herriaren izenean, dena dela, badaiteke jatorrizkoa bokal belarra izatea. Hasieran goiko bokal palatala duen *iguzki* aldaera ere kausitzen dugu Nafarroan, XII. mendearen akabailan hasirik: *Igusquiça* (1195), *Yguçcunea* (c. 1198), *Iguçcune* (N, 1284), *Igusquiçaga liorr* (N, 1284).

Aferesia ere ezaguna da Erdi Aroan, Nafarroako datuetan bereziki: *Turripurri* (< *Iturripurri*, N, 1138), *Lordibeguia* (< *Elordibegia*, G, 1141-42), *Eneco Ceariç de Ylarraçu* (< *Azearitz*, N, 1178), *Domiqu Turrico*, *Pero Lopiz Turrico* (< *Iturriko*, N, 1243, 1294), *Matriayn* (< *Amatriain*, N, 1259, 1269). Latinetik edo erdara batetik hartutako maileguetan protesia ohi zegoen, hitza dardarkari anizkunez hasten zelarik: *Martin Erripaburuco* (Lizoain, 1366), *Orti Errotaco*, *Garcia Errecalde* (N, 1366), e.a. Inoiz, hala ere, bokal protetikorik gabe azaltzen da toponimoa: *Reztia* (A, 1025) baina *Erreçtia* (1257), eta gauza bera suertatzen da hasierako bokala berezko duten beste izen batzuekin: *Erreta* (N, 1196) eta *Reta* (1268), *Erroytegui* (A, 1232) eta *Roytegui* (1232, 1257).

### *2.1.2. Yod eta wau-ren karietara*

Hasierako *yod* dela eta, *Jungitu* [xungítu] (A) beti <j>-rekin azaltzen da, baina pentsatzekoa da Erdi Aroko lekukotasunetan [j] edo antzeko zerbait irudikatu nahi zela; Iruraiz-Gaunako *Jauregi* herria (A) *Yauregui* da 1257an, dudarik gabe *yod* batekin ebakitzen zelako. Hitz barnean *Mandoiana* dago 1025ean, *Mandoyana* 1257an, *Mandoiana* XVI. mendean, baina *Mando[x]ana* egun erdaraz (A). Euskaraz *Mandoia* zela badakigu, 1572ko *Mandoyabidea* toponimo txikiari esker. Ik., dena dela, Salaberri (2015b: 268).

Egun gaztelaniaz [x] duten beste toponimo frankok ere [j] zuten garai batean. Adibidez, *Subijana (de Álava)* herriaren izena *Suuillana* da Rejan, 1025ean, *Sobeiiana* 1257an, *Suvijana* [subijana] 1295ean; egungo aldaera lortzeko **Subi[ʃ]ana* aldaera behar da, bistan denez. Euskaraz, aldiz, badakigu 1025eko <ll> [λ] hori, iturburu **-lj-* batean duena, ez zela aldatu, XVIII. gizaldian behin baino gehiagotan azaltzen diren *Subillabide*, *Subillabidea*-ren moduko toponimo txikiek hola frogatzen baitute. Berebat, [x] soinua dugu *Baroja* herri izenean, kasu honetan abiapuntua [lh] izan bada ere, hots, bilakaera [lh] > ([λ] >) [j] > [x] izan bada ere: *Barolha* (1025) > *Baroja* (1180), *Varoiia* (1257) > *Baro[x]a*. Toki izenaren euskal bilakaera zein izan den, holakorik izan bada segurik, xuxen ez dakit, baina **Barola*, **Parola*-ren moduko bat espero genuke.

Lekune berean, hitz barnean, [j] galdu ere egin daiteke, *e*-ren ondoan: *Arreio* (A, 1025) eta *Arreo* (1257 eta orain); *Gobeio* (1025), *Goveyo* (1295), *Gobeyu* (1331) eta *Goveo* (1050), *Goueo* (1257), *Gobeu-*, *Gobeo-* euskal toponimian; *Kineia* (1025) eta *Guinea* (1074, 1257); *Leioz* (N, 1071), *Leioz* (1144), *Leyoç* (1267) eta *Leotz* (1210), *Leoz* egun; *Ybargoençelayn* (G, 1340), *Yuargoen* (B, 1384), *Juan de Goenaga*, *Juan de Goyenaga* (G, 1457), *Urigoen*, *Mendigoen* (G, 1476).

[w]-ren kari, erran dezaket hitz barruko *-kw-* multzoan, kasuren batean bederik, galdu egin dela, *Apodaca* (1025, 1293 eta egun), Mitxelenak proposatzen duen bezala **capo aquae*-tik eratorri behar bada, edo zehazkiago, **capo de aqua*-tik. Galera bera (*kwV* > *kV*) dakusagu *Aquis* > *Akize*-ren bilakaeran, eta orobat toponimia txikian, han-hemenka.

Behin edo beste metatesia gertatu da, bokal osoa zena, kontsonantea desagertzearen ondorioz, bokalerdi bihurtu eta gero, baina soinuaren tokialdatzea arrunt berandukoa da, itxuraz: *Abulanga* (1025), *Aulanga* (1257, 1500, 1501, 1712), *Aulanga-* euskal toponimian (*Aulangarabidea*, 1712), *Alangua* bilakatua egun.

### *2.1.3. Aspirazioa*

Jakina da hasperena Akitaniako idazkunetan usu agertzen dela, eta egun oraino ere bizirik dagoela Iparraldean, mugaz haraindian. Aspirazioak Hegoaldean izan duen bilakaera,

berriz, ez da hain ezaguna: badakigu 1025ean Araban bizirik zegoela, «Donemiliagako Reja» delakoak argi erakusten duen moduan, baina horretaz landa ez dakigu ongi noiz lekutu zen herrialde bakoitzean, Mitxelenak ikusi zuen bezala, Nafarroa Garaian galera goiztiarra izan zela irudi badu ere. Ik. bedi, alabaina, Manterola (2015).

Lan honetan gauzak Erdi Aroan nola izan ziren pixka bat aztertu dut, onomastikak, toponimiak bereziki, aukera eman didan heinean. Gauzak, argienik Araban nekuskien eta, beraz, hor egin ditut ahaleginak gai hau ikertzean. Atera daitezkeen ondorioak hauek direla uste dut:

1. Arabako agirietan 1025eko Reja da, ezbairik gabe, aspirazio gehien erakusten dituena.
2. Batzuetan irudi luke *h* azaltzearen zergatia morfema muga finkatzea dela: *-egi* (*Arzanhegi*, 1025), *-en* (*Arbelgoihen*, 1025, baina *Mengano Goien*), *-eta* (*Azazaheta*, *Ogueheta*, *Erroheta*, 1025), *-iz* (*Gastehiz*, 1025, baina *Gasteiz*, 1089, 1135).

   Toponimoan lehenago beste aspirazio bat dagoenean ez da Rejan *-eta*-ren aitzinean <h>-rik azaltzen: *Gelhegieta*, *Haizcoeta*, *Haizpilleta*, *Harrieta*, *Haztegieta*. Halaber kontsonante ondoan: *Andozketa* (1025), *Galharreta* (1025), *Harizaualleta* (1025; honek eta aurrekoak, gainera, lehenago beste aspirazio bat dute). Nolanahi dela, badira, Rejan, bi aspirazio dituzten toponimoak, baita hiru dituen bat ere.

   Manterolak (2006) idatzi du *-zaha* atzizkian ageri den *-h-* hori ez dagokiola berrekailuari, hurrengo zatiari, artikuluari baizik, hots, hirugarren graduko erakusleak jatorriz duen aspirazioa dela. Hala bada, 1025eko *Elhorzahea*-n bi artikulu ditugula pentsatu beharko dugu, aipatu autorearen arabera: *Elorza* + *ha* artikulu zaharra + *a* artikulua berria, lehena ez baitzen ulertuko orduko. Zernahi gisaz, honek argi salatzen du Burunda, Ameskoa eta Lanatik mendebalera azaltzen zen eta den *-a* + *-a* > *-ea* disimilazioa 1025erako burutzen zela edo burutu zitekeela. Ik., alabaina, Mitxelenak (1971a: 246) honetaz idatzi duena, eta Manterolaren proposamen berria (2015), gorago aipatu dudana.

   Egin daitekeen beste interpretazioa tarteko *-h-* hori *-egi*, *-eta*, *-en* eta *-iz*-en aitzinean agertzen den bera dela pentsatzea da. Honela izatera, Rejako *Izarza*, *Larraza* eta *Loza* toponimoak artikulurik hartu ez dutenak lirateke. Artikulurik gabeko toponimoak izatea ez da harritzekoa; egia erran, mirestekoagoa da *-(t)za* atzizkia dutenetan gehienak artikuludunak izatea, beste gisan, mugatzailea har dezaketen Rejako euskal toki izenetan, berrogeita zazpi baitira *-a* gabe edireten ditugunak, eta hamabi besterik ez *-a* dutenak. Honek Mitxelenak nahi zuen bezala *-zaha* (*-tzaha* alegia) egungo *-tza*-ren aldaera artikulugabe aitortzearen

alde hitz egiten du eta, honen arabera, *Elhorzahea* izanen litzateke artikulua daraman bakarra eta artikulu bakarra daramana.

Gainera, Manterolaren 2006ko interpretazioa onetsiko bagenu, onartu behar genuke 1025erako *-ha* artikulua zaharkitua zegoela, bestela ez baita ulertzen zergatik erantsi zitzaion berriz *-a* aurreko **Elhorzaha*-ri. Nolanahi ere, *Elhorzahea*-k erakusten du xi. menderako *-a* + *-a* > *-ea* egiten zela edo egin zitekeela, erran bezala. Orduan, galdegiten diot nik neure buruari, zergatik ditugu, adibidez, *Artaçaa* (1257, 1295), *Ahbaunçaa* (1066), *Illarraçaa* (1295), *Unçaa* eta *Velunçaa* (1257) eta ez, espero izatekoa zen bezala, **Artaçea*, **Ahbaunçea* edo **Habaunçea*, **Illarraçea*, **Unçea* eta **Velunçea?* Erantzunak bi izan daitezke: 1) disimilazioa lehen urratsetan zegoen eta bakarrik toponimo gutxi batzuk ukitzen zituen, alegia, ez zen ezinbestekoa, 2) *Artazaha*, *Habaunzaha*, *Hillarrazaha*, **Unçaha* eta **Velunçaha*-n iturburu zu(ke)ten toponimoak mugagabeak ziren, ez zuten artikulurik, eta *-aa* segida horiek aspirazioa galtzearen ondorio ziren.

3. Batzuetan *h-* grafemak *b*-tik ateratako **f*-k utzi aztarrena irudika dezake. Hau da, nire iritzian, Barrundiako *Etura* herri izenaren kasua: 1257an *Hetura* da, 1275ean *Betura.* Uste dut *Vetulo*, *Vetulus* izena oinarri harturik azaldu behar dugula (ik. Salaberri 2015b: 180).
4. Arabako mugako Nafarroako ibar batzuetan, eta Araban berean, zenbait aldiz bokalarteko *-b-* > *-f-* pausoa burutu dela kontu egin daiteke, J. A. Lakarra irakasleak iradokitzen didan moduan (a.p.) ezpain-horzkaria zuzenean **-hb*-tik atera dela pentsatzen ez bada behintzat (*zur* + *bide* > **zuhbi* > *zufi*; ik., beherago, *Zestafe*-ren bilakaera historikoa). Aldakuntza hau indarrean egon da zenbait mendez eta, erraterako, Rejan *Zuffia de suso* eta *Zuffia de iuso* ditugu, gero *Çoygoytia* (1257), *Çuygoytia* (1276) bihurtua(k), segur aski *zuhi*-dun forma bat tarteko zela, *Zigoitia* azken gizaldietan. Beste kasu batean *-b-* > *-f-* > *-h-* bilakaera goiz gauzatu zen: *Zuhia Barrutia* (1025), *Çuybarrutia* (1257), *Zuia* gaur egun.
5. Aspirazioa oinarri edo osagaitako *h*-dun hitza daukaten toki izenetan ere agertzen da: *haitz* (*Haizcoeta*, *Haizpilleta*…, 1025), *haritz* (*Harizaualleta* 1025), *harri* (*Harrieta* 1025, 1295; *Harriolha* 1025, *Harriola* 1257), *hegi* (*Hegilior* 1025, *Heguileor* 1257; *Heguiraz* 1025, *Heguilaz* 1257, 1504), *huri* (*Horivarri*, *Huriarte* 1025, *Hiriuarri diuina* 1257, *Hollivarri* 1295, *Huriart* 1257), *zahar* (*Uriçahar* 1257, *Huriçar* 1295), *zuha(i)tz* (*Zuhazulha* 1025, *Çohaçola* 1324; *Zuhazu* 1025).
6. Inoizka <g> grafema aurkitzen dugu, <h>-ren partez: *Hurabagin* (1025), *Hurabain* (1066), *Uravahin* (1332). Irudi luke kasu horietan <g> hasperenaren adierazle dela, edo soinu horren oinordeko, Nafarroako *ago* 'ahoa', *begor* 'behorra', *egun* 'ehun', *igi* 'ihia' eta bestetan agitzen den moduan. *Gardelegi*-n lehenik <h> kausitzen

dugu, eta gero <g>: *Gardellihi* (1025), *Gardelegui* (1135). Antzera *Ametzaga*-n: *Hamaezaha* (1025), *Ameçaga* (1257). Ildo bertsutik, 1257ko *Hopeegui*-k *h-* du hasieran, 1295eko *Gopehegui*-k eta geroagoko formek duten *g*-ren ordainetan.

7. Toki izen pare batean <k> dago aurrena, <h> ondoren: *Lekete* (952), *Lehete* (1025), *Lehet* (1268); *Carreluzea* (1025), *Arriluzea* (1257), *Arluzea* orain.
8. Hasperena ozen ondoan ere agertzen da, batez ere alboko ondoan: *Aialha* (1025), *Ayala* (1295); *Arzanhegi* (1025); *Barhoa* (1025), baina *Barron* (1257, 1495); *Barolha* (1025; Mitxelenaren arabera [*FHV*, 207] ez da segurua izen honetan *ola* ote dugun), *Elheni uilla* (1025), *Harriolha* (1025), *Heinhu* (1025), *Mendiolha* (1025), *Olhaerrea* (1025), *Olhauarri* (1025), *Zuhazulha* (1025), e.a.
9. Hasperena, kasuren batean, barneko lekunetik hasierakora igaro dela irudi luke, toponimoa bokalez hasten denean: *Arzanhegi* (1025), *Harçanegui* (1257). Uste dut balio duela Arabako toponimoa Ibargoitiko 991ko *Arzanegui*-rekin alderatzea, Arabako eta Nafarroako egoerak (edo eskualde batzuetakoak bederen) desberdinak zirela garbi samar ikusten delako, oraingoan segurik.
10. 1025eko datuetan zenbait aldiz bi hasperen edireten ditugu izen berean: *Elhorzahea*, *Harhazua*, *Heinhu*, *Hurizahar*, *Hararihini*, *Harrahia*, *Harriolha*, *Hereinzguhin* edo *Herenizguhin*, *Zuhazulha*. Data bereko *Hurabagin*-en ere bi aspirazio daudeke, erran bezala bukaerako *-g-* hori hasperenaren irudikatzaile izan baitaiteke (cf. 1332ko *Uravahin*). Geroago, 1066an, *Hihazarreta* dugu Araban berean. Hiru aspirazio dituen toponimoa ere bada: *Harhahia* (1025).
11. 1025erako, leku izenen batean, hasperen horietako bat galdu zela uste dut. Hau gertatu zaioke *Bahaeztu*-ri, egun *Maestu* denari, Rejan berean ageri den *Bahanezta*-rekin alderatuta pentsa baitaiteke **Bahaneztu*-ren gisako batetik atera dela. Bestela, bat baino gehiago dira 1025ean bi aspirazio (edo kasu batean hiru) izanik gero bakarra dutenak, hasmentako lekunean gehienetan; ez beti ordea (ik. bedi Salaberri 2015b: 422-428).
12. Rejako beste *h* batzuk ere sudurkari batetik atera zitezkeen, baina hau ez da segurua: *Arcahia*, *Ihurre*. *Vhulla*-n aspirazioa zaharra izan daiteke, ez nahitaez sudurkari batetik ateraia. *Larrahara*-n bigarren osagaia irudi duenaren hastapeneko soinua berezkoa izan liteke.
13. Arabako aspirazioaren gaiarekin bukatzeko erran nahi nuke <h> ugarienik Rejan aurkituagatik, badirela zantzuak XV. mende arte, hau barne dela, bizirik egon zela pentsatzeko, baina ez, jakina, 1025ean azaltzen den testuinguru guztietan eta indar berarekin. Gero, badakigu Lazarragaren eta Landuchioren lanetan aspiraziorik ez dagoela eta, beraz, onar daiteke XVI. mendearen bukaerarako galdua zela Araban (halarik ere, ik. Salaberri 2015b: 422-428).

Bizkaiko aspirazioa Erdi Aroan zertan zen ezin dut une honetan erran; dokumentaziorik zaharrenean badira zenbait toponimo Arabako 1025eko egoera gogora dakarkigutenak: *Olabeeçahar*, *Olhabeeçahar*, *Cumelhegi* (Elorrio, 1013). Ondoren, XIV. mendean, Arabako agirietan bezala, <h> tarteka *-eta* toponimia atzizkiaren aitzinean edireten dugu: *Muruheta* (1379), *Acoheta*, *Meçeheta* (1388), baina ez, arrunki bederen, ondoko mendeetan: *Arteeta* (1499), *Arteta* (1510). Antza duenez, zenbait aldiz *h* letra erabiltzearen arrazoia bokalak bereizi nahia dateke, baina hau ez da segurua, hasperenaren ispilu ere izan daitekeelako, izen batzuetan: *Basahury*, *Goycohesea*, *Harrçaha* (1456), *Berasarihaga*, *Naharria* (1458).

Gainerakoan, ditudan datuak aski nahasgarriak dira eta, oraingoz, ezin dut gauzak nola ziren hein batean ere zehaztu. Ematen du aspirazioak agertu behar lukeen hitzetan ez dela agertzen, baina *h*-dun silaba zenbatgarrena zen ere aintzat hartzekoa da: *Yturrao* (*aho*, 1388), *Axpee* (1388), *Aguyrreveengoa* (*behe*, 1496), *Arriaran* (1376), *Olaaran*, *Pica-aran* (1388), *Aranguren* (*haran*, 1398), *Arnabar* (1398), *Ypisticoarriaga* (*harri*, 1443); *Hondarroa* (1256, 1495), baina *Ondarroa* (*hondar*, 1334); *Legarçaarra* (1388), *Anchiçaar* (*zahar*, 1426).

Azaldu behar ez lukeenean ere kausitzen dugu *h*, honelakoetan kontu grafiko hutsa zelako marka, toponimoren batean aspirazioa hitz hasmentara igaro zela pentsa badaiteke ere: *Hegurrolaçaarra*, *Herroytegui* (1388), *Herretolaça*, *Hurdaoxynaga*, *Hurquiaga* (1398), *Hechabarria*, *Helexalde* (1470). Horregatik, dagokion lekuan denean ere ezin dugu behin eta betiko ondoriorik atera: *Hunçagaegui* (1388, 1398).

Gipuzkoako Erdi Aroko egoera zehaztea ere ez da aise, datu anitz ikusi behar direlako eta eskribau bakoitzak darabilen sistema grafikoaren azterketa zehatza egin behar delako, ondorenetara igaro aitzinetik. Irudi luke hasperena berandu arte egon dela bizirik; azterketa sakonagoa burutu behar, ordea, ondorio fidagarrietara iritsiko bagara.

Batzuetan <h> (eta inoiz <f>) espero genuen tokian azaltzen da: *Formaiçttegui* (1013; cf. *Joan de Çufaznabarr*, *Miguel de Çufaznabarr*, G, 1519; 1055ean *Zuhaz nabar* ageri da), *Lohinaç* (1053), *Galharragua* (1140-1143), *Gorostica Zaharra* (1141), *Lehete* (1338, 1396; *Leete*, 1417), *Harriaga* (1305), *Hargarayn* (1349), *Harrieta* (1470, baita *Aldare Arria* ere), *Lohiola* (1380; *Loyola*, 1474), *Ochoa Çaharra* (1433), *Laharregui* (*Laarregui*, 1434).

Inoiz hasperena, <h> ebakitzen bazen bederik, bokalak bereizi nahiari zor bide zitzaion, gorago Bizkaiko datuak iruzkintzean erran dudan gisan, baina kontuan har bedi elkartua dela: *Gomiç Sugaharra* (1074; eta *Lupe Sugar*, 1349); hemen *arra* dukegu, hau da, emea ez dena, Mitxelenak (1971a: 255) izkiriatzen duen moduan. Besteren batean ez dago hasperenik: *Garcia Uicinaya de Oiquina* (1203), *Aurrgaste*, *Aurgaste* (1384, 1451). Nahasgarri suertatzen dira, bestalde, egungo *Aduna* eta *Anoeta* herri izenen testigantza zaharrak: *Hanoeta* (1312), *Ahanoeta* (1348, 1450, 1509, 1546; *Anueta* ere bada, 1450ean), *Ahaduna* (1450), *Haduna* (1470).

Beste eskualde batzuetan bezala, hemen ere *h*, ardura, *-eta* atzizkiaren aurretik azaltzen da: *Iraheta* (1394), *Elgueheta* (1405; *Elgueta*, 1335), *Ocaheta*, *Oçaheeta* (1429), *Arreteheta*, *Corteheta*, *Gastannagazteheta*, *Gaztannagasteheta*, *Yrameteheta*, *Elcoheta* (1479), *Hetumeheta* (1510), baina *Heguiluzeeta* (1452), *Çuloeta*, *Puçueta* (1479), *Herbeeta* (1515). Artetan *eder* eta *ondo*-ren aitzinean ere agertzen da, Arabako datuetan bezala, elkartuetan: *Zelataheder* (1452), *Aztihederra*, *Olahondogoiena* (1479). Ik. Salaberri (2015b: 430).

Nafarroan hasperenaren galera goiztiarra izan zela onartzen den gauza da. Mitxelenak (*FHV*, 205-206) dio *h*, nafar agirietan, batez ere bokal artean azaltzen dela, eta hitz hasieran bakana eta sistematikotasunik gabea dela; aspiraziorik ez zuen Aragoiko erromantzearekiko ukipenez galduko zela uste du, XI. gizaldirako. Besteak beste, etsenplu batzuk emateagatik dakartzagu hona, hurrengo onimoak agertzen dira *h*-rik gabe: *Sancio Aurra* (1033), *Iriuerri* (1055; *Yriuerri*, 1208), *Egilucea* (1096), *Eguileor* (1213), *Yrissarri* (1214), *Domeca Iriarteco* (1226), *Iriondoco soroa* (1242), *Miguel Arguina* (1229), *Lop d'Arana*, *Sancho Arana*, *Maria Sanoiz d'Aiztegui*, *Sancha Enecoiz Aizpuru*, *Michael de Irumugaeta*, *Garçia Eçurra* (XIII. m.).

*H-* dutenak badira, baina testigantzak, arauka, gutxiago dira, eta ez dira sistematikoak: *Heguinarren* (1100; *Eguinarren*, 1178), *Lop Hyriverri* (1220), *Hyrriuerri de Val d'Araquil* (1256), e.a. Batzuetan, data berean, bi aldaerak ditugu, *h*-duna eta *h*-rik ez duena: *Hirihurre* / *Irihurre*, *Hirihuso* / *Yrihuso* (1350), adibidez. Usu, eraman behar ez luketen hitzek daramate *h-*: *Sansa Husain* (XIII. m.), *Hateguren* (1284), *Eneco Hunaya* (1366), *Andre Humea* (1366), *Sancho Heliçaguibela* (1366) eta beste, ardura afera grafiko hutsa zelako seinale eta adierazgarri.

Aspirazioaren indarraren edo indar ezaren erakuskari ohi den *-zahar* hitzean ere, gehienetan, ez ohi dago *-h*-rik Nafarroako agirietan, salbuespenak izan arren: *Aziruzaar* (1090-94), *Leguarreta Çaarra* (1110), *Gasteluzaar* (1193), *Larrainçarr* (1225), *Verrioçaar* (1249), *Çalduçaarra* (c. 1252), *Martin de Echaçar* (1260), e.a. Egia da zenbait aldiz bikoiztasunak ditugula eta, konparaziorako, aipatu *Martin de Echaçar* hori bi urte geroago, 1262an, *Martin de Echaçahar* dela, eta 1226an *Jaun Orti Çaharra de Baranin* opatzen dugula, 1228ko *Fortunius Çabarra* (sic) *de Baranin*-ekin batean. Erroibarren 1284an *Orçiren Çorita Çaharra* dago (*Ortzantzurieta* egun), eta honekin batera baita *Larrandoren bi sarohe* ere data berean, baina hor berean *Çoyteguieta* dugu, eta handik lau urtera *Andresemetasaroya* (**Andresemerasaroya*-ren irakurketa ustela segur aski, hots, *andre* + *Semera* + *saroia*) azaltzen da. Hiriburuari hurranago, Senosiainen, *Saroeçarra* daukagu 1284an.

Ondoriotzat erran daitekeela uste dut, Mitxelenarekin batean, *h*-ren erabilera ez dela sistematikoa, eta bokal artean zalantza anitz daudela, baita hitz berean ere, itxuraz soinua galbidean zegokeelako, XIII. menderako. Nafarroa handia da bere txikian, eta neke ez ezik

arriskutsua ere bada orokortzea, baina bistan da hamabi eta hamahirugarren mendeetan egoera Arabakoaz bestelakoa zela, hasperenari doakionez. Halarik ere, Manterolak (2015) Nafarroan (edo eskualde honetako alderdi batzuetan) berandu arte bizirik egon zela uste du. Garbi dago, hortaz, gaiak azterketa sakona behar duela.

### *2.1.4. Igurzkariak eta herskariak*

Hitz hasierako lekuneaz kestione, ezaguna da *giputz* gentilizioak eta honen eratorria den *Gipuzkoa* toki izenak ez dutela *g*-rik, aurreneko testigantzetan, belardun aldaerak ere aski zaharrak izanagatik. Beraz, badirudi hemen *g*- protetikoa ikusi behar dela: *Ipuscua* (1025?), *Ipuçcha* (1048), *Ypuza* 'Gipuzkoa' (1085), *Ypuççoa* (c. 1032), *Santius de Ypuççoa* (c. 1125), *Ipuzcua* (1140-1143), *Pero Ypuça* (N, 1197), *Lope Iputça* (N, 1213), baina *Guipuzcoa* (1304, 1313, 1328, 1374, 1397), *Guipuzcua* (1305), *Guipuscoa* (1317), e.a. Geroago, disimilazioz hain segur, *Lipuscoa* ere aurkitzen dugu, 1514an. Zernahi dela, Burgosko Oka Mendietako asentamendu edo kokagune txiki bat izendatzen bide zuen *Gipuzare* ageri da 943an, eta Errioxa Garaiko herrixka bide zen *Gipuzauri* 1067an (Peterson 2004). Geroztik, badaiteke *g*-dun aldaera hasieran holako soinurik ez duena baino zaharragoa izatea.

Izen bakan batzuetan *g*- > *k*- dugu: *Corostidi* (G, 1452), *Juan Quipuça* (B, 1514), arruntena alderantzizkoa izan arren, *k*- > *g*- alegia: *Camboa* (A, 1025), *Gamboa* (1257, 1388 eta egun); *Kerrianu* (A, 1025), *Gerriau* (1713 eta orain); *Kineia* (A, 1025) eta *Guinea* (1074, 1257 eta ondoren); *Kircu* (A, 1025), *Guircu* (1393 eta euskal toponimia), e.a. Hastapenean ahostuna duen aldaeraren ondoan ahoskabea daukana ere azal daiteke (*k*- > *g*-): *Catizzau* (N, 1143), *Gatiçano* (1226); *Falcon Calderero*, *Falcon Galderero* (N, 1366), *Iohan Fernandes de Carquiçano*, *Juan de Garquiçano* (G, 1391, 1394). Hurrengo lekukoetan, aldiz, *g*-duna euskarazko aldaera da eta *c*-duna erdarazkoa: *Lope Gamaraquo* = *Lop de la Cambra* (N, 1283).

Horzkariei doakienez, hasierako lekunean ahoskabea ahostundu egin da (*t*- > *d*-): *Doronno* (Trebiñu, 1167, 1172), *Doroyno* (1257), *Doronnu* (1415), *Doroño* egun, *Doroñu* XV-XVIII. mendeetan, *Tolonius* jende izenetik; *Dota Arindoiz* (N, 1197), *Dota Araquina* (N, 1244), *Ama Dota* (N, 1256), baina azken izen hau bi ahoskaberekin ere aurkitzen dugu: *Tota Bita* (N, c. 1033), *Totaquo* (N, 1258; cf. *RS*-eko *Totacoje* izen ttipia, *Totakoxe* egungo grafian, erdarara *Totica* itzulia). Besteren batean ere dokumentazio zaharrean ohikoa *t*- > *d*- izan arren, badago, halaber, *t*-: *Dolareaga* (N, 1290), *Dolariaga* (G, 1413), baina *Tolarguibele* (G, 1479).

Ezpainbiko herskariez den bezainbatez, Erdi Aroan *p*- > *b*- dugu *Betriquiz* (1025, 1266), *Betriquez* (1294) Arabako herrixka hustuaren izenean, baina harrezkeroztik *p*- azaldu ohi da (*Petriquiz*, 1728; *Petriquis* XVIII. m.); ez, ordea, mikrotoponimian, hemen

ahostuna atxikitzen baita (*Betrikizbidea*, *Betrikizotsalarrina*; Martínez de Madina 2015: 435). Oinarria **Betriki* izanen da (cf. *Betriko* eta *Joangi*, *Joanki* izen ttipiak), hots, toponimoa *b*-dun jende izenaren gainean eratua egonen da.

Aldakuntza bera dugu *Paterniana* (A, 1025, 1156) > *Baternia* (1232) eta *Pingunna* (A, 1025) > *Bicunia* (1156), *Vicunna* (c. 1275, 1351), *Bicunna* (1295), *Vicuña-* (euskal mikrotoponimia) herri izenetan. Kasuren batean ahoskabea ageri zaigu; *Padura* herrixka dugu Araban 1025ean, eta *padura* azaltzen da gero ere herrialde honetako leku izendegian: *Artapadurea* (1706), *Oreninpadura* (1756), *Paduragoia* (1799), *madura*-rekin batean: *Ajarimadura* (1716), *Andramiliamadura* (1548, 1716), e.a. Pauso hau berau (*p-* > *m-*) dagoke *Sancho Mutio, Toda Mutio*-n (N, 1256; toponimia txikian ere edireten dugu), latineko *puteu*-tik atera bada. *B-* / *m-* txandakatzea ere badago: *Barindano* (N, 1209), *Varindano* (1331) eta *Marindano* (1241).

Antroponimian agertzen diren zenbait izen etorkiz arruntetan ere ohikoa izan da *p-* > *b-* ahostuntzea, antzinadanik: *Peidro de Bortu* (N, 1286), *Sancho Martines Baquea* (B, 1329), *Martin Periz Uaradisu* (N, 1330), *Eluira Borrua* (N, 1366). Batzuetan jatorrizko *b-* atxiki da: *Sanso Bicorra* (N, XIII. m.). Toki izenen batean *p-* / *b-* aldizkatzea zaharra da: *Perteycaarte*, *Bertericaarte*, *Berteyca* (B, 1388, 1398), eta noiz edo behin txandakatzea gaurdaino atxiki da: *Paternain* (N, 1183, 1249 eta egun) > *Baternain* (XIII. m., 1242, 1256 eta orain, bakanka baizik ez izanik ere).

*F-* > *b-* ere badago: *Burunda* (c. 1032 eta egun), *Fronto*-ren **Frontana* eratorritik atera bada, baita *f-* > *f-* ere, Arabako *Foronda*-k etimo bera duela onesten bada. Lehen bilakaera ondoko hauetan ere azaltzen da: *Orti Balchoeniz* (N, 1067), *Balcoe de la Torlegui* (N, 1105; cf. *Oxoa Falcoiz*, N, 1072), *Beunza* (N, 1180), *Beuntza* orain, Mitxelenak dioen bezala *fenu*-ren eratorria bada.

Aldakuntza bera daukagu *Bagoeta* (1025, 1200), *Bagueta* (1156), *Bagoheta* (1295), *Bagoeta* (1502) herrixka hustuaren izenean, euskarazko *bago* (*fagus* latinez) zuhaitz izena baitu oinarri. Nolanahiko gisan, toponimoa euskararen barnean sortua dateke, latinarekiko erlaziorik gabe.

*F-* > *p-* edo *f-* > *f-*, *p-* erakusten duten izenak ere badaude, izan dezaten tartean **b*-dun aldaera edo ez: *Fagasarri* (B, 1300-1301, 1376), *Pagasarri* (1375); *Sant Fauste*, *San Pauste*, *San Paustee* (B, 1485, 1490). Behin edo behin *f-* > *f-* / *ø-* dago: *Fortuni* > *Orti* edo *Urti* (normalki), *Forti* (bakanka), eta beharbada baita *Borte* ere (*f-* > *b-* hortaz). *Foronda* (ia aldaera bakarra dokumentazio osoan, 964tik aitzina) / *Oronda* (Reja,1025) parean *f-* / *Ø-* bikoiztasuna dagoela dirudi edo, hobeki erran, *f-* / *h-* / *ø-* (cf. *Juan de Horonda*, 1282), afera grafiko hutsa ez bada segurik.

Ezpainbikoaren eta ezpain-horzkariaren arteko zalantzaren ondorio dateke zenbait toki izenetan ikusten den *p-* > *f-* aldakuntza: *Paldu* (A, *Paidu* irakurri beharko, 1025) vs. *Faydo* (1257), *Faidu* (1258), *Faydu* (1565); *Prango et Prango* (A, 1025), baina *Franco de Suso*, *Franco de Iuso* (1257), *Franco* gaur egun, *Francu-* gehienetan euskal toponimia txikian; *Pudio* (A, 1025) vs. *Fudio* (1257), *Fuidio* (1415etik). Nolanahi ere, uste dut hiru izenen etimoek *f-* dutela (*Fuidio*-renak *p-* zuela ezin baztertu; Salaberri 2015b: 188-189) eta, beraz, pentsatzen ahal da *f-* > *p-* > *f-* edo *f-* > *f-*, *p-* gauzatu dela.

Hasierako lekuneko beste garapen batzuk:

- *b-:* *Benea* (A, 1025), *Venea* (1257, 1295), uste dudan bezala *Benaeus* antroponimotik eratorri behar bada.
- *b-* > *m-:* *Mizkina* (1025) > *Mezquina* (1156) > *Mezkia* (euskal mikrotoponimia historikoan eta orain), irudi duen gisan *Viscius* jende izenetik abiatu behar badugu, **(villa) biscina*-tik alegia, eta ez erdarazko *(villa) mezquina*-tik (cf. *Uilla Mezquina*, N, 1120 > *Millamezquia*, 1616); *Bahaeztu* (1025), *Mahaeztu* (1179), *Maeztu* (1257), *Mahastu* (1321), *Maeztu-* (1590), *Maestu-* (orain) toponimia txikian.
- *m-* > *b-:* *Boriniuar* (A, 1025), *Boliuar* (1257), oraingoan asimilazioz edo disimilazioz.

Barneko lekunean, berriz, bilakaera hauek ditugu:

- *-b-* > *-ø-:* *Abulanga* (A, 1025), *Aulanga* (1257); *Luçayde* (N, 1110) eta *Alduide* (N-NB, 1193), bigarren osagaia *bide* bada. Inoiz bokalarteko ezpainbikoa erori eta ukipenean gelditu bokalak batu dira: *Harrizauallaga* 1025ean, *Arriçauala* 1257an, *Arriçala* 1310erako, *Arrízala* egun. Honetan, alabaina, azentuak eragin silaba-erortzearen aurrean gaudeke, *Arrízabala*-tik abiatu eta; atzizkia (*-aga*), ezaguna den bezala, kendu-utzizkoa da batzuetan.
- *-b-* > *-b-*, *-ø-* (elkar. edo hitz barnean): *Gordoua* (A, 1025), *Gordoba* (1257), *Gorrdoa* (1479), *Gordoba* (1496, 1505), *Gordoa* (1500, euskal toponimian eta orain); *don Miguel Garçeyz de Leyouarren* vs. *don Fortuinn Esteuan de Leyoarren* (N, 1276); *Muruvarren* (N, 1240), *Murugarren* (1223) eta *Muruarren* (1265). Tartean hitz muga dagoenean ere gertatzen da: *Lope Erascoyz* (N, 1232), *Martin Ascoariz* (N, 1350); ez beti, ordea: *Munio Berascoiz* (N, 1033), *Enequo Uascoariz* (N, 1350).
- *-b-* > *-b-* / *Cahosk.–* (elkar.): *Dota Lopeiz Aizburu* (N, XIII. m.), *Guarcia de Allozvacoiç* (N, c. 1260), *Amesbacochaga* (B, 1347).
- *-b-* > *-b-*, *-f-:* *Nabar*, *Nabarra* / *Nafar*, *Nafarra* (jende izena, B, L, N). Cf.

*Navarra* / *Nafarroa* koronimoa, *Nafarra* idatzia 1102an.

*-b-* > *-b-*, *-m-*: *Çueldi çaual* (Aralar, XIII. m.), *Çubelçu* (G, 1479), eta *Cumelhegi* (B, 1013), *Zumelzu* (A, 1025), *Garcia Çumelçquo* (N, 1230), *Çumelçu* (B, 1356).

*-b-* > *-f-*: *Zeztave* (A, 871), *Cestafe* (1257), *Çeztafehe* (1289), *Zestafe* orain. Euskararen bilakaeran, jakina den bezala, usaiakoa alderantzizkoa (*-f-* > *-b-*) ohi da: *Gostovaro* (N, XIII. m.), *Costobare de Elexalde* (B, 1469). Ik. gorago *Zuffia*-ren kariaz esan duguna.

*-b-* / *-p-* (elkartuaren bigarren osagaiaren hasieran, txistukari ahoskabe ondoan): *Sancius Ayzpurucoa* eta *Aiçburua* (N, 1226, 1249), *Arrosbide* eta *Arrozpide* (N, 1388, 1398). Hemen, beste kasu anitzetan bezala, bigarren osagaiaren gardentasunak eragina izan du.

*-b-* > *-p-* / *Cahosk.*– (lehen edo big.; elkar.): *Haizpilleta* (A, 1025), *Ayçpe* (N, c. 1032), *Aizpurgi* (1057, osagaiak *haitz* + **burgi* badira), *Azpizcar* (G, 1451), *Belispuru* (G, 1470), *Juan Peres de Ysaspiribil* (< *isasi* + *biribil* segur aski, G, 1497, baina ez da daitekeen iturri bakarra), e.a. Cf. Arabako herrixka despopulatu baten izena den *Bagoeta* (1025etik 1513ra), *Laspagoeta* (1518an).

*-d-* > *-t-* / *Cahosk.*– (*-doi*, *-dui*, *-di* atzizkian): *Ariztuia* (N, 1042), *Lapasti* (N, XI-XIII. m.), *Isasti* (N, 1226), *Çuaztia* (N, 1228), *Arançabelztia* (G, 1479).

*-dV-* + *g-*, *k-* > **-tk-* > *-k-* (elkar.): *Ycortaeta* (G, 1445).

*-g-* > *-ø-* (elkar. eta noizbehinka hitz barnean): *Sorauren* (N, 1064), *Elgauren* (A, 1393), *Aznar Erreteyco* (N, 1366, baina *Orti Erreteguico*, N, XIII-XIV. m.). Tartean hitz muga dagoenean ere galtzen da batzuetan: *Orti Arindoyç* (N, 1157), *Lop Sanso Arceiz* (N, XIII. m.), baina *Garcia Garindoytz* (N, 1167-1193), *Semero Garziz* (NB, 1150-1167).

*-g-* / *-b-* nahasketa: *Domingo Nagussi*, *Domingo Nabussi* (N, 1283). Hurrengo toponimoan *-g-* / *-b-* / *-ø-* aldizkatzea dago: *Gudugarreta* (G, 1384, 1393), *Gudubarreta* (1387, 1393), *Guduarreta* (1464).

*-g-* > *-g-* / *Cahosk.*– (ez da ohikoa): *Ayzgaynna* (N, 1350).

*-g-* > *-k-* / *Cahosk.*– (ohikoa da): *Azcarat* (NB, 1274), *Oldiçcuren* (*Oldiç* ere bazen; N, 1290), *Ayzcorria* (G, 1430), *Lascutya* (B, 1489), *Muniozcuren* (N, 1493).

*-k-*: *Eriz Akutiz* (N, 1068), *Acotayn* (N, 1268), *Acutayn* (1280).

*-k-* > *-g-* / *n*– (morfema muga tartean dela, baina baita hitz barnean ere): *Blasco Ariamango* (N, 1111), *Maria Vengoa* (N, 1168), *Sancho Errongari* (N, 1366). Arabako *Jungitu*-n ere ahostuntze bera burutu dateke, etimoa **(fundu) iuncitu* baita ene irudituan.

*-k-* > *-k-* / *l*– (hitz barnean eta tartean morfema muga dagoela): *Olcoz* (1114), *Olcotz* (1268), *Semeno Çalquea Egoçquueco* (N, XIII. m.), *Orti Bassauilco* (N, 1255). Mitxelenak dioenez (1971a: 264), «herskarien

ahostuntzeak inoiz ez du izan euskalki gehienetan orokortasun bera **-lk*-ren kasuan (cf. *Olcoz*, e.a.), eta **-lt-*, **-nk-* eta besterenetan» .

*-k- > -k- / n–: Miquelis Orqueienco* (N, 1226), *Garçia Periz Esanco* (N, 1330), *Miguel Echaraynco* (N, 1366), *Ichusco Barrenco* (N, 1366).

*-k- > -k- / r–: Latorco urenic erdia* (N, 1197), *Matheo Galuarco* (N, 1330).

*-k* (big.) > *-t + b- > -p–*, *Errepide* (G, 1475). Nafarroako Foruan *«en la cayll que dize el bascongado* erret bide» ageri da (Mitxelena, *AV*, 220). Autore honek dio *errege*-ren elkarketako aldaera *erret-* dela.

*-k* (big.) > *-t + g-*, *k- > -k-: errege + gorte > *erretkorte > errekorte: Semeno Errecorte* (N, XIII. m.).

*-k* (big.) > *-t + V- > -tV-: Erret Ihera*, *Erret Ihera Guiuelea* (N, 1150, < *errege + (e) ihera*), *«el logar llamado de Retola»* (G, 1479, < *errege + ola*), *«el sel de Arretolaça»* (B, 1498, < *harregi + olatza* hain segur). Gauza bera dugu, ustez, *Orti Erreteguico*-n (N, XIII-XIV. m.), osagaiak *errege + -egi* direla irudi baitu (*AV*, 220).

*-k* (big.) > *-t + z- > -tz-*. 1125eko *«(pontes regales qui dicuntur) Errezubi»*-n (N) *errege + zubi* dituzkegu.

*-p- > -p-* (eusk.) / *-b-* (gazt.): *Opaucu* (A, 1025), *Opaco* (1098), *Opaqua* (1257), *Opakua* egun, baina *Obago* (N, 1236), *Hubago* (1280), *Ubago* orain, erdal bilakaeraz.

*-t-: Tota Bita* (N, c. 1033), *Dota Arindoiz de Vilava* (N, 1197); *Arteeta* (Olloibar, 1087), *Arteta* (1155 eta orain), baina *Artieda* (N, 1020-1030 eta egun), hau erdararen eraginez edo bilakaeraz. Kasu batean *t* dugu, aitzinean *n* izanik ere: *Sancho Irantico* (N, 1366).

*-t- > -d- / l--: Urrialdo* (A, 1025), *Zalduhondo* (A, 1025, *Çalduondo*, 1475), *Zaldu-burua* (N, 1080), *Aldunate* (N, 1068 eta gaur, *Alduate* euskal toponimian). Albokoa bigarrenkaria denean ere herskari ahoskabea ahostun daiteke: *Açaldegui* (< *azeari*, *azari* 'zorro' + *-tegi* 'sitio', N, 1215).

*-t- > -d- / n–: Guendearia* (N, 1196), *Laurendi* (N, 1196, 1256), *Sanduru* (N, XII-XIV. m.), *«cabe la andapara»* (G, 1479). Ahostuntze bera dukegu *Abendagnu*-n (A, 1025), oinarriko pertsona izena, uste dudan bezala, *Abentius*, *Aventius* bada. Toponimoren batean ahoskabe / ahostun aldizkatzea dago: *Morentien* (N, 1103), *Morendiain* (1210), *Morendin* (1212), *Morentin* (1228), *Morentiain* (1233), *Morentin* egun. *Guendulain* (N, 1055) azaltzeko ez dugu nahitaez latinera jo behar, antroponimoaren *Gendule* euskal aldaeraren lekukotasuna bai baitugu.

*-t- > -d- / r–: Garde* (1085etik orain arte), atzizkia *-te* lekuzkoa bada.

Arabako toponimian, Bizkaiko zenbait toponimotan eta Iparraldeko hitz batzuetan bezala, *-tjV- > -txV-* izan da bilakaera: *Aletxa* (< **Alletiana*), *Andetxa*, *Anditxa* (<

**Antestiana*, **Antistiana*), *Gometxa* (< **Cometiana* < **Comitiana*). Zernahi gisaz, *-tjV-* > *-tzV-* ere bada: *Abezia* (**Abetzia* < **Avitiana*; oinarriko izena *Avitius* da), *Mendoza* (< **Mendotza* < **Ventuitiana*; pertsona izena, esku artean antrotoponimoa badugu segurik, *Ventuitius* izan daiteke).

Herskaria edo igurzkaria duten kontsonante multzoei doakienez, XII. mendean ageri den *-bl-* XIV. gizaldiaren lehen erdian *-l-* bihurtua aurkitzen dugu: *Semero Oblata*, *Orti Oblata* (N, XII. m.), baina *Sancho Olata*, *Johan Olata* (leku berean, 1330; cf. 1603ko *Olatare gortea* 'O(b)lataren korralea').

### *2.1.5. Txistukariak*

Etimoak *s-* duenean euskal toponimoak *z-* ohi du dokumentazioan eta orain, nahiz egun, euskara galdu den lekuetan, erdaraz bezala ebakitzen den, hortzarteko igurzkariarekin: *Zandiun* (N, c. 1100), *Çandion* (1162), *Çandiu* (1366), *Zandio* gure egunotan, *Sante* antroponimotik; *Azeari Zanduetaco* (N, 1195), *Çandueta* (1268), *sandu* 'santua'-ren *zandu* aldaeratik; *Zurbano* (A, 1025, 1066, 1138), *Çurbano* (1257), *Zurbao-*, *Zurbau-* euskal toki izenetan, *Surbius*-en **Surbus* aldaeratik; *Zekuñau* (A, *Cicujano* erdaraz), *Cekungau* idatzia 1025ean, *Secconius*, *Seconius*-etik.

Herskari aurrean ere *-z-* dugu euskaraz Erdi Aroan, zenbaitetan, Nafarroan bereziki, hortz-hobikari bihurtu bada ere: *Badoztayn* (N, 1143), *Badoçtain* (1199), *Badostain* (XII. m.; salbuespena da, alabaina, garai honetan), *Badostáin* orain; *Marti Ezteveiz* (N, XIII. m.), baina *Esteve* (N, XIII. m.); *Eluira Garceyz Bazterreco* (N, 1330) eta *Johan Basterreco* (*ibid.*). Maizxko erdaraz *s* dugu eta euskaraz *z*: *Isaua*, *Issava*, *Ysaua* (N, Erdi Aroa), *Isaba* (gazt.) / *Izaba* (eusk.); *Sanguassa*, *Sangossa*, *Sanguessa*, *Sanguossa* (N, Erdi Aroa), *Sangüessa* (gazt.) / *Zangoza* (toponimia txikian eta euskaraz), e.a.

Erdi Aroan, egun bezala, hasierako *s* hortz-hobikaria, *x* bihurturik, anitz aldiz edireten dugu izen ttipietan (Salaberri 2009): *Xemena* (N, c. 1033), *Axari* (NB, 1189), *Axearico* (N, 1366), *Xemerot* (L, 1374), *Mary Xoanexco* (B, 1464), *Xuane* (G, 1490), e.a. Lehen izenetik kanpo ere opatzen ditugu forma palatalizatuak, hitz hasieran: *Johan Xerrano* (N, 1330), *Lope Xagarrbey* (N, 1366), *Maria Xati* (N, 1366; cf. *Miguel Periz Çatico*, N, data berean), *Iohan Martines Xenar* (G, 1391). Hitz barnean eta hitz bukaeran ere kausitzen dugu: *Maria Ygurra* (N, 1330; cf. *Pero Yxur d'Olavarrieta*, G, 1514-1516; *izur* da forma neutroa), *Xemeno Apex* (N, 1366; *apez*-etik), «*Martin de Berroui, dicho Naguxi*» (G, 1475; *nagusi*-tik).

Izen ttipietan, adierazkortasuna erdiesteko, zenbait soinu ([d], [f], [g], [j], [k], [l], [m], [n], [p], [ɾ], [ś], [ć], [t], [s], [ts]) palatalizatzea ohikoa izan da eta oraindik ere hala da, hein batean: «*Michelco fijo de Chariquo*» (*Mikel(e)*, *Migel* eta *Maria*; N, 1366),

*Garchot* (*Garze*, *Garzea*; N, 1366), *Dochato* (*Dota*; NB, 1412-13), *Chachin Urragui* (*Martin*; G, 1429), *Cherran de Leyçaola* (*Fernando*, *Ferrando*; G, 1436), *Cherran de Vrquiaga* (B, 1453), *Chopino de Anuçibay* (*Lope*; B, 1464), *Chachu* (*Joan*; G, 1470), *Chaxi de Aranaztegui* (*Grazia*; G, 1475), *Charia de Sagarraga* (*Maria*; G, 1481), e.a. Izengoitietan [tʃ] soinua [s]-ren palatalizatzearen ondorena ere izan daiteke: *«Juan Çuri de Gorostieta dicho Churio»* (G, 1409).

Erdi Aroaren bukaeran eta ondoko mendeetan, izen ttipiak sortzeko baliabideetako bat txetxekaria beste soinu baten ordezko ez, baizik protesitzat ibiltzea zen: *Churdincho* (*Urdin*; N, 1423), *Churtin* (*Urtin*, G, 1489; *Furtin*-en aldaera bustia ere izan daiteke), *Chordon*, *Chorron* (*Ordoño*; G, 1497 eta 1596ko *RS*), *Chandres* (*Andres*; G, 1503), *Chosan* (*Osana*; B, 1507-10), e.a.

Hitz barneko lekuneari doakionez, *Lassarte* (A, 1025), *Mussitu* (A, 1025) dauzkagu Erdi Aroan, *Lasarte*, *Musitu* orain. Bestalde, Trebiñuko egungo *Ajarte*-k eta *Bajauri*-k 1025eko *Hassarte*-n eta *Bassahuri*-n soinu bustia zegoela pentsarazten digute.

Orain elkartu-eratorrietan gertatzen den afrikatuen igurzkaritzea ukituko dut:

*-(t)s- + b- > -sb-*, *-sp-: Gorosbiscay* (N, 1284). Cf. gorago aipatutako *Laspagoeta*.

*-(t)s + d- > -st-: Gorostuy Uelça* (N, 1284).

*-(t)s + l- > -sl-: Goroslarre* (N, 1110). Mitxelena (*AV*, 288) *gorosti*-n oinarritzen da Orreagako 1284ko *Gorosquaray bizqui*-ren modukoak azaltzeko, elkarketan gertatutako sinkopan alegia.

*-(t)s + s- > -s-: Gorosarri* (G, 1479). Badaiteke <s> horren azpian dagoena orain <ts> idatziko genukeena izatea; hola balitz leku izena *Gorotsarri* irakurri behar genuke. Beste posibilitate bat bigarren elkargaia *sarri* ez, baizik *harri* dela kontu egitea da.

*-(t)s + z- > -sz-: Goroscelay* (N, 1259); hau, apika, *Goro(s)tzelai* ere irakur liteke.

*-ts + g- > -sk-: Lascutya* (< *lats* + *gutia*, B, 1489).

*-ts*, *-(t)s + V- > -stV-: Haberasturi* (A, 1025), *Gorostaldea* (N, 1110), *Gorostarrçu* (N, 1366), *Lastola* (G, 1495; etimoa *lats* + *ola* bada, eta ez *lasto* + *ola*; cf. *Urola*). Arabako izenaren *h*- horretaz ik. Salaberri (2015b: 49).

*-tx + b- > -xp-: Axpuru* (A, 1320), *Axpee* (B, 1388).

*-tx + g- > -xk-: Ochoa d'Axcutia* (B, 1379), *Axcana* (B, 1398), *Pero de Arexcurenaga* (B, 1419). Bestalde, <s>-rekin idatzirik ere ager daiteke: *Juan Ortiz de Arescurenaga* (B, 1476), agian despalatalizaturik zegoelako, baina hau ez da segurua, grafietan ohi dauden dantza eta zalantzak ezagunak baitira.

*-tx + V- > -xtV-: Axtarloa*, *Axtarlo* (B, 1388, 1556, osagaiak *atx* + *arlo* badira).

*-tz + b- > -zp-*: *Ayçpe* (N, c. 1032), *Domingo d'Aizpuru* (N, XIII. m.).

*-tz + g- > -zk-: Pero Orrazquina* (< *orratz* + *-gina*, N, 1244). Beste azalbide

bat etimoa *orrazi, orraze* + *-gina* dela kontu egitea da.

*-tz* + *l-* > *-zl-: Gazlarrañeta* (N, 1288), *Ayzluçe-barrena* (G, 1417).

*-tz* + *z-* > *-tz-*: *Ayçorroça* (N, 1197), *Urrizçelay* (N, 1259).

Txistukaria duten beste kontsonante multzo batzuk:

*-rs-: Gersalzaha* (A, 1025).

*-rst-: Arstegiza* (B, 1053).

*-r(t)z-: Sayturcegui* (N, 1306) > *Satrustegi.*

*-rtz* + *b-* > *-rzb-*, *-rzp-* (gehienetan), *-zp-: Garcia Arzpuru* (< *hartz* + *buru*, Jaitz, 1183) = *Garsias Azpuru* = *Arzpuru* = *Arzpuru Yazco*, baina *don Garsia Arzburu* (*ibid.*; *Miguel Arzpellça* (< *hartz* + *beltza*, N, 1366).

*-rz- > ((*)-x- >) -s-: Elhossu* (A, 1025), *Helossua* (1257), *Elosu* orain; *Lussarbe* (G, 1141-42), *Aycita Lusarra* (N, 1284); *Lussarreta* (N, 1268), *Lusarreta* (1280), *Luxarreta* (1280, 1366), *Lusarreta* egun.

*-rz- > -z-: Aiessa* (N, 1059), *Ayesa* erdaraz, baina *Ageza-* euskal toponimian; *Lurçurriaga* (A, 1257), *Luçuriaga* (c. 1275, 1351 eta Perez de Lazarraga, c. 1600).

*-rzt-: Sagarztegui* (Aldude, 1284).

*-zn-: Ayznaganneta*, *Yznaga* (G, 1374), *Çuaznabar* (N, 1478).

Txistukari asimilazioa ezaguna da gurean (cf. *zin* + *etsi* > *sinetsi*): *Zamarce* (N, c. 1032; lehen osagaia *san* 'santua' dela uste dut), *Sansoheta* (A, 1025, *San(t)so* [< *San(t)zo*] + *-eta*), *Searsoro* (G, 1452, *zehar* + *soro*-tik). Txistukari disimilazioa ere ezaguna da: *Gogate* (A, 1025), *Chochat* (1257), *Otxate* egun; *Sanssa Aceariz de Urreta* (N, 1134-1150) eta *Andre Ansa de Çeberyo* (B, 1464); *Don Sanso Miqueleiz* = *Jaun Anso Miqueleiz* (N, 1221); *Açenari Sansoiç de Iuarra*, *Acenari Sansoiç de Berrio* (B, 1013) vs. *Senior Fortunio Sanoiz de Sanguessa* (N, 1056), *Orti Sanoiz Ostatuco* (N, XIII. m.). Ik. Mitxelena (1971a: 255).

### *2.1.6. Sudurkariak*

Atal honetan, Erdi Aroko onomastikan oinarriturik, bokalarteko sudurkari ahularen erorketaz mintzatuko naiz lehendabizi, eta hau oztopatzen duten gertakariak aipatuko ditut gero. Ondoren, sudurkari *fortis* edo bortitzaz ihardukiko dut, baita sudurkari ahul galdu baten aztarnak eragindako beste baten gogortzeaz ere. Era berean, disimilazio kasu batzuen berri emanen dut, elkarren ondoan gelditu sudurkarien bakuntzaz hitz eginen dut, zenbait elkartutan dakusagun lehen osagaiaren bukaerako sudurkariaren dardarkaritzeaz, *n* / *nb* aldizkatzeaz, eta erreperkusioz edo beste gisan tarteka sortu den bukaerako sudurkariaz. Amaitzeko, *-ain* atzizkiak Erdi Aroko lekukotasunetan erakusten duen palatalizazioa ere hartuko dut solasgai, laburki.

Sudurkari *lenis* edo ahularen erortzea bokalarteko lekunean aurkezten duten toponimoak ugariak dira Erdi Aroko agirietan, eta antroponimoak ere badaude. Hona hemen batzuk: *Aceari Ortiz de Ziroze* (N, 1094), *Amallogutia* (eta *Amallonagusia*, B, 1256), *Arratia* (B, 1053; **Arratiana*-tik itxuraz; jende izena *Rat(t)ius* edo *Arretius* dateke), *Bakio* (B, 1053, **Bakiano*-tik atera bada).

Erdi Aroko testigantzetan, frankotan, bakarrik sudurkaridun aldaera dugu, baina hurrengo gizaldietako mikrotoponimoek garbi adierazten dute *-n-* euskaraz erori egiten zela. Geroztik, soinu hori eskas duten formak dokumentuetan azaltzen ez badira, euskal izenek horietan agertzeko izan dituzten eragozpenengatik baizik ez da izan, eskribauek aldaera herrikoitzat hartu eta alde bat uzten zituztelako (Mitxelena 1971a: 253): *Durana* (A, 1025, 1257, 1295…) eta *Durabea*, *Duracoaldea*, *Duragana*; *Maturana* (A, 1012, 1066, 1295) eta *Maturabidea*, *Maturaldea*, e.a.

Berezia da *Urdiñarbe* (eusk.), *Ordiarp* (erd.) herri izena (Z): egungo euskal aldaerak sudurkari palatala dauka, forma ofizialak, agirietako lekukoek bezala (*Urdiarue* 1072, *Vrdiarp* 1189, *Ordiarp* 1270…), holakorik ez izanagatik. Nire iruditUan, jatorrizko **Urdinarbe*-tik **Urdīh̄̃ārbe* aterako zen lehenbizi, eta *Urdiarbe* ondoren erdaraz, *Urdiarp*, *Ordiarp* bihurtua azken bokala eroritakoan, baina *Urdiñarbe* euskaraz, bokal palatalean gelditu sudurkaritasunak berriz kontsonante sudurkaria sortu eta. Beste azalbidea euskaraz etorkizko **Urdinarbe*-ren tarteko sudurkaria ez zela galdu kontu egitea da (*urdin* izenondoak, hau baldin bada gure leku izenaren azpian duguna, ez du sudurkaria galtzen, *Urdiñate*, *Urdiñeta*, *Urdiñola* bezalako toponimoetan) eta aitzineko bokal sabaikariak eraginda palatalizatu zela, edo itzulietara, sudurkaria palatalizatu zela eta ez zela erori. Dokumentazioko sudurkaririk gabeko aldaerak bearnes gaskoiari leporatu behar genizkioke, jakina denez mintzaira honetan aipatu kontsonantea desagertzen baita, bokalarteko lekunean. Bestalde, euskaraz bezala, gaskoian *-n*-k, erortzearekin bat, aurreko bokala sudurkaritu zuen, gero, hizkera gehienetan, ezaugarri hori galdu den arren (ik. Rohlfs 1977: 156).

Zenbait aldiz lekututako kontsonantea hastapeneko tokian ez, baizik beste batean azaltzen da: *Gorri de Areaça* (B, 1504) vs. *Juan de Areança*, *Juan Gorri de Areança* (B, 1514). Tankera berekoa da Garibaik hamaseigarren mendean biltzen duen *Leniz* (1257, 1266) izenaren *Leynç* euskarazko aldaeraren garapena: *Leniz* > **Lēh̄̃īz* > **Lēīz* > *Leintz*. Orobat Altzanian 1469an ageri den *la peña de Arrlaunbe*-ko *laun* 'laua' osagaiarena: *planu* > **lãh̄̃ũ* > **lãũ* > *laun*.

Beste gai batera igaroz, diodan gaur egun *-ain* duten toponimo franko sudurkari palatalarekin azaltzen direla Erdi Aroko testigantza batzuetan: *Adoaing* (N, 1033), *Adoain* (1057, 1068 eta egun); *Garitoang* (N, 1086), *Garitoain* azken gizaldietan; *Lizuing* (XI-XII. m.), *Lissoanh* (1274) eta *Liçoain*, *Lizoain* (XIII. mendean, 1366an eta

egun); *Surianh* (1277) eta *Zuriain* (1090), *Çuriayn*, *Curiayn* (XIII. m.), *Çuriain* (1366) eta abar. Ez toponimo guztiak, alabaina, ezta inguratzekorik ere: *Acutain* (1236, 1238, 1260), *Acutayn* (1366), konparazione.

Irigoienek (1987: 202) erraten du jatorrizko *-ani*-tik *-añ* atera dela eta, horregatik, erromantzez ez dela *-ane*-ren moduko formarik sortu; euskarazko bilakaera, bizkaitar euskaltzainaren irudiko, *-ani* > *-añ* > *-ain* izan izanen da. Honek, egia erran, *Paternain* eta *artzai*, *mandazai* eremu berean egotea azalduko luke beharbada, baina nabarmendu nahi dut bukaeran palatala dagoela salatzen duten lekukoak maiz dokumentu jakin batzuetan baizik ez ditugula edireten. Holakoak bazirela ez dut ukatzen (ezin, nahi izanda ere), baina ditugun palataldun aldaerak bakanak eta ardura berandukoak direla iruditzen zait, *-ain*-dun toponimo kopuru handia azaltzeko.

Sudurkari disimilazioa (*m - n > m - r*) dukegu **Mezkinitz > Mezkiritz* herri izenean, baina ez da segurua, eta noizbehinkako gertakaria baizik ez dela bistan dago, Nafarroan berean *Uilla Mezquina* (1120) > *Millamezquia* (1616) ageri delako, eta Araban *Villa Mezkina* (947), *Mizkina* (1025), *Mezquía* (*Mezkia* euskaraz), sudurkariaren galerarekin. Disimilazio bera dugu, jende izenetan, *Semeno*, *Xemeno* formetatik ateratako *Semero*, *Xemero*-n.

Toponimoren batean *n - n > l - n* dugu: *Etunain* (N, 1240), *Hetunayn* (1268), *Itunayn* (1280), *Etunayn* (1366), baina *Etulayn* (1280), *Etulain* azken mendeetako euskal toponimian eta gure egunotan. Beste disimilazio bat, albokoei eskainitako atalean ikus daitekeen gisan, *ñ - n > ll - n* da, gero euskaraz zenbait aldiz *l - ø* bihurtu dena. Disimilazio bera dagoke toki izen batzuen erdal aldaeren oinarrian, Arabako *Krispiña*-renean erraterako (ik. beherago).

Disimilazio garbia (*n - ñ > ñ*) dago Arabako *Pingunna* (1025) leku izenean, *Bicunia* 1156an, *Vicunna* 1275, 1351 eta 1484an, *Bicunna* 1295 eta 1486an, *Vicuña*- toponimia txikian eta Perez Lazarragaren lanean (*«lecu ona Bicuña»*). Gertakari bera dukegu *Santa Marina de Oxirondo*-n (G, 1489), etorki, dirudien bezala, *oxin* + *ondo* badu, baina *oxir*- elkarketako aldaera dela ere kontu egin daiteke, *jaur*- eta *oihar*- formen erakoa (ik. beherago; cf. *Usurbil* eta *Sunbilla*). Hau ongi aztertu beharreko gaia da. Artetan *n - l > l - l* daukagu: *Hondalde* > *Holdalde* (G, 1479).

Jakina den bezala, sudurkaria *fortis* denean ez da erortzen eta, usu, agirietan <nn> izkiriaturik kausitzen dugu: *Munniahin* (A, 1025, *Munain* egun), *Adanna* (A, 1025), *Hurigurenna* (A, 1025). Orobat antroponimian: *Enneco* (NB, 1189), *Orti Gurenna* (N, 1137). Zenbait aldiz, izen berean, bi sudurkari ditugu, bat ahula eta bestea bortitza, eta, espero izatekoa zen bezala, bortitza atxikitzen da eta ahula galtzen. Hau da, besteak beste, *Annius* oinarritzat duen 1025eko *Ania*-ren (A, *Anya* 1257an) kasua: **(villa) anniana* > *Ania*. Honen aldakan erdal bilakaera izan duen *(Salinas de) Añana* dugu.

Batzuetan atzizkiaren *n* ahulak, erortzean, aurreko bokala sudurkaritu du, eta horrek aitzineko beste sudurkari emea laukatu eta lekutzetik gibelatu du: **(villa) beneana* (*Benaeus*) > **BeNeā̄h̄ā* > *Benea* (A, 1025, *Venea* 1257). Beste horrenbeste dukegu, hain segur, herrialde bereko beste zenbait izenetan ere, *Dibiña*-n erraterako (*Divinus* dateke oinarria).

Inoizka *-n* + *m-* > *-m-* daukagu (ik. *AV*, 248. or.): *Unamendico* (N, 1076), *unamaizter* (N, 1167), *Aramendia* (*Lope de Aran Mendico*, 1181-1222; *Pero Aramendiquo*, 1286). Ezaguna da zenbait hitzen bukaerako sudurkaria, elkartuaren lehen osagaian dagoenean edo eratorriaren oinarrian, dardarkaritzen dela, hots, *-n* > *-r* dugula: *Çaro Jaureguia* (NB, 1243), *Jaurbaracea* (N, 1258), *Oyardo* (B, 1489, 1518). Ez beti alabaina, ezta hurrik eman ere: *Oyançauala* (N, 1258).

Behin edo beste *-m-* / *-mb-* aldizkatzea dugu: *Lamiaran* (A, 1464) / *Lanbiaran* (*ibid.*, 1465); hau ezaguna da oraino *kamio* / *ganbio* bezalako eleetan, zenbait tokitan. Kasuren batean sudurkaria erreperkusioz sortu dateke, hots, aitzineko beste sudurkari batek eraginik jaio dateke: *Ybargoençelayn* (Santatria aldea, 1340); beste batzuetan, ordea, ez dakigu xuxen zeri zor zaion bukaerako *-n* gehitu hori: *Hargarayn* (G, 1349), *Martin Yuannez de Garayn* (G, 1363).

Mitxelenak (*AV*, 248. or.) *-n* + *l*-ren elkarketatik *Haraluzeia* (< *haran* + *luze* + *-a*; Burgos, 1068) atera dela dio, gero *Faranluceia* (1077), *Franlucea* (1176) azaldu arren, *Froncea* orain. Nolanahi ere, gehitzen dut nik, lehen testigantza 947ko *Faranlucea* da. Errenteriako hizkuntzalariak euskal eremuan aipatu elkarketatik beti *-l-* ateratzen dela gaineratzen du (*Araluce*).

***2.1.7. Albokoak***

Atal honetan, kontsonanteez dihardudan atal gehienetan bezala, ez dago Mitxelenak bere lanetan agerian ezarri ez duenik ia deus ere, hots, hemen aipatzen ditudanak ezagunak ziren lehendik ere. Alabaina, uste dut garrantzizkoa dela ezagutzen genituen bilakaera eta gertakari horiek Erdi Arorako bizirik zeudela aipatzea eta, gehienetan, halabeharrekoak ez, baizik hizkuntzan ongi errotutako aldakuntzak zirela azpimarratzea.

Aurren-aurrena alboko ahulen dardarkaritzeaz arduratuko naiz. Ugariak dira, Erdi Aroan, *-l-* > *-r-* pausoa aurkezten duten toponimo eta antroponimoak: *Munio Berascoiz* (N, c. 1033), *Eriz Akutiz* (N, 1068), *Berasco Aoçavala* (N, 1173), e.a. Badirudi 1002rako indarrean zegoela *-l-* > *-r-* aldakuntza hori, urte horretan *Esquilo* pertsona izenetik atera datekeen *Ezquiroz* toki izena (bi *Ezkirotz* ditugu Nafarroan) ageri baita lehen aldiz (ik. Salaberri 2011b: 50). Arabako datuetan behin baino gehiagotan kausitzen ditugu aldakuntza hori izan duten leku izenak: *Arina* (*Alinna* antroponimoa du oinarri), *Etura*

(*Vetulus*, *Vetulo* dateke etorkia), *Padura*, e.a. Egungo *Egilatz* / *Eguílaz*-en kasua berezia da, etimologia argia izanik (*hegi* + *latz*) *Hegiraz* azaltzen baita 1025ean, *Heguiraz* 1156an, baina *Heguilaz* 1257an, 1479an eta 1498an. Berezia diot *latz*-en hasierako albokoa ahultzat hartu delako eta *tap* bilakatu, bokal artean, nahiz morfema muga tartean egon.

Arabako herri izenetan, zenbait aldiz, asimilazioz edo disimilazioz beharbada, *l-* > *n-* dago: *Langrares* (1025), *Lancrares* (1257), *Lanclares* (1295) > *Nanclares (de Oca)*; *Langara* (1025, 1247), *Lancrares* (1257, 1279) > *Nanclares (de Ganboa)*, baina *Langarica* (1257, 1393 eta egun). Beste batean ere ez da garbi ikusten alboko asimilazioa den edo sudurkari disimilazioa: *Lunantu* (1025), *Lulantu* (1257). Behin *l - l* > *l - n-* dugu, baina kontu puntuala da hau: *Martin de Olaboliaga* = *Martin de Olaboniaga* (B, 1467).

Albokoa batzuetan palatalizaturik azaltzen dela dirudi, itxuraz aurreko *i*-ren eraginez: *Hillardui*, *Hillarrazaha*, *Haizpilleta* 1025ean, *Ilarduia* eta *Ilarraza* ebakiak lehen biak orain (hirugarrena herrixka despopulatua da). Donemiliagako agiri ezagunean badira, alabaina, ondoan bokal palatalik izan gabe digrafoa erakusten duten toponimoak: *Harrizavallaga* (*Arrizala*), *Hollarruizu* (*Olarizu*), *Kessalla* (herri hustua). Hori eta egungo ebakera ikusirik, pentsatu nahiago dut <ll> horiek alboko bortitz edo *fortis*-a irudikatzen dutela. Egoera berean dago Arabako *Dullanzi* (1025), *Dulanci* (1257), *Dulance* (1295), eta segur aski baita Nafarroako *Cilleguieta* ere (N, 991); *Olleta* (N, 1211, 1230) zalantzazkoa da, *Oylleta* idatzia 1268an, *Olleta* egun erdaraz. Euskaraz *Oleta* errankatu zaio (< *ola* + *-eta*, bistan da), toponimia txikiak salatzen duenez, eta, horregatik, 1185eko *Oleta* euskal ebakeraren ispilu dela kontu egin beharko dugu.

Mitxelenak dioen bezala (1964b: 30), erdal eremuan 1025eko *lh*-ren ohiko emaitza *ll* izan bada ere (*Olhauarri* 1025, *Olauarri* 1257, *Ollábarre* gaur egun gaztelaniaz), toki izenen batean aipatu datan *lh* zena [x] da egun: *Barolha* (1025) > *Baroja* ([baroja], 1180), *Varoiia* (1257), *Baro[x]a* orain. Gauza bera agitzen da, errenteriarrak dioenez, *Suuillana* (1025), *Subiiana* (1257) izenarekin, *Subijana-Morillas* baita gaur egun. 1025eko beste *Suuillana*, Gasteiz ondoko *Subijana de Álava* delakoa (*Sobeiiana* 1257, *Suvijana* 1295), aldiz, euskaraz *Subilla* zen (*Subillabide*, *Subillabidea*), hau da, alboko palatala zuen. Halaber, badaiteke *Ormijana*-ren euskal izena (*Uruillana* 1025ean) **Urbilla* izatea, baina ez dugu honen ziurtasunik. Bien etimoek *-lj-* zuketen (**Subilius*, **Suvilius* eta *Urvilius*).

*Crispijana* (*Crispinana* 1257an, *Crispijana* 1295ean) leku izenaren oinarria *Crispinius* pertsona izena da eta ez dago, beraz, albokorik etimoan. Erdarazko bilakaera **Crispiniana* > **Crispiñana* > **Crispi[j]ana* (palatal nahasketaz) > **Crispi[ʒ]ana* > **Crispi[ʃ]ana* > *Crispijana* izanen zen, hau nahitaezkoa ez den arren, pentsa baitaiteke denbora batean alboko palatala zuen aldaera (**Crispillana*) sortu zela, sudurkari disimilazioz. Euskaraz *Krispiña* zen (ik. Salaberri 2015b: 231-232) eta, hortaz, irudi luke gure hizkuntzan behintzat albokodun aldaerarik ez dela izan.

Arabako *Apellániz* herri izena sudurkari disimilazioaren emaitza (*ñ - n > ll - n*) izanen da: *Apinganiz* (irakur bedi *Apiñaniz*, 1025), *Apignaniz* (1110), *Apillaniz* (1257), *Apinaniz* (1299). 1456an *Juan de Apeñaniz* edo *Juan de Apellaniz* zeritzana bizi zen Zekuñaun. Martínez de Madinak (2010: 310-313) 1531, 1633 eta 1635ean *Apelaiz* huts-hutsa biltzen du; euskal mikrotoponimian, ikertzaile berak jasotzen duenez, erdarazko forma «ofizialaz» landara, sudurkaririk gabeko albokodun aldaera ohi dago (ik. Salaberri 2015b: 76-77).

Albokoa bortitza denean ez da *tap* bihurtzen, jakina den bezala. Hau, latinetikako maileguetan, geminatua zen lekuneetan suertatzen da (*Angellu* 1025, *Anguellu* 1156; *Anguello*, *Anguelu* 1333; *Angelu(soloa)* 1794an, A), edo hitz bukaeran, artikuluaren edo beste morfema baten aitzinean (*Zaualla* 1025, *Çauala* 1257, *Harizaualleta* 1025, *Harizaballeta* 1135, A).

Kontsonante multzoetan, *-zl-* gorde egin da, elkarketan: *Anizlarre* (G, 1270), *Aneyslarrea* (G, 1340), *Anislarrea* (1495); bigarren aukera multzo horietan *-tzl-* izatea da, baina grafia arazoak tarteko ez dakigu hala zen. Beste batean *-sl-* bigarrenkaria dago, bokala erortzearen ondorioz, baina baita *-s-* hutsa ere: **Uhulasarri* (A, *Uhula* herri izena + *sarri*) > *Uhulsarri*, *Uhusarri* (1393).

### *2.1.8. Dardarkariak*

Ezaguna den bezala, euskaraz dardarkaria, amaierako lekunean, gehien-gehienetan anizkuna da orain, eta halakoa zen Erdi Aroan ere, <rr> grafiak ikusirik: *Legarreta Nauarr* (N, 1071), *Oiuarr* (N, 1072), *Amayurr* (N, 1197), *Pedro Sanches Yçarr* (A, 1321), *Beotibarr*, *Oribarr* (G, 1340), *«Menaut de Sant Miguel dit Sudurr»* (NB, 1393), *Eynbarr* (G, 1409) eta beste. Kontsonante aitzinean ere <rr> dugu ardura: *Rodrico Avarrca* (N, 1136), *Sagarrcelay* (NB, 1284), *Elorrmendi* (G, 1340), *Johaneco Gorostarrçu*, (N, 1366), *Pero Orrtiz de Arhaya* (A, 1386), *Usurrbil* (1390), *Arrmendia* (G, 1436), *Gorrdoa* (A, 1479), *Arrteaga* (B, 1489), e.a. Usadio hau bera, <rr> hitz bukaeran eta kontsonante aitzinean izkiriatzea, edireten dugu Landuchioren XVI. gizaldiko hiztegian (Agud eta Mitxelena 1958: 21), marka, errenteriarraren iritzian, Araban dardarkaria lekune horietan anizkuna zela, edo gutxienez hola ebaki zitekeela.

Artetan disimilazioa burutu da, eta *tap*-a zein dardarkari anizkuna lekutu edo bestelakotu da: *Oreriuia* (N, 1043), baina *Oreliuia* (1094), *Dona Maria Viçagorria* (N, 1244), *Eneco Alchirri* (< *ardi* + *zirri*, *txirri*, N, 1193); *Arçorriç* (N, 1256), *Arcorriz* (1366) eta *Alçorriz* (1290), *Alzórriz* egun. Asimilazioa ere aurkitzen dugu noizean behin: *Ferrando* (N, 1176), *Borçarorreta* (< **Bortzalorreta*, N, 1279), *Chorron de Çubiaurre* (G, 1497), baina *Chordon* (B, 1520), *Chordon RS*en. Dardarkari metatesia nahiko segurua

da *Chinchetru* (A, 1257, c. 1275, 1351), *Chynchertu*, *Chyncherto*, *Chinchertu* (1441) toponimoan.

Elkartuaren lehen osagaiaren azken dardarkaria askotan erortzen da: *Lugorria* (< *lur* + *gorria*, A, 1312), *Aquegorta* (< *aker* + *gorta*, B, 1388), *Lunarrutua* (< *lur* + *narrutua*, G, 1479), *«la peña que se llama Beoburua»* (< *behor* + *burua*, A, 1481, baina *Beorburu*, N, XIII. gizalditik), *Juan de Vizcalaza* (*bizkar* + *latza*, G, 1489). Hemen sartu behar genuke, halaber, *Ama Jaureguiaga barrena Auriçchoa* (N, 1110), baldin lehen osagaiak *hamar* + *jauregi* + *-aga* balira; ez da hau, ordea, daitekeen azalbide bakarra. Beste batzuetan elkartuko lehen osagaiaren azken bokala erori eta hondarreko lekunean gelditu dardarkaria «albokotu» egin da, euskal joera zaharrari jarraikiz: *Udal ondoa* (< *udare* + *ondoa*, N, XIII. m.), *Madalçaga* (< *madari* + *-tza* + *-aga*, G, 1346), *Açaloleaga* (< *azari* + *ola* + *-aga*, B, 1388), *Madalgarrasza* (< *madari* + *garratza*, A, 1456), *Çamalbide* (< *zamari* + *bide*, G, 1495).

Behin edo beste *-r-* / *-d-* nahasketa dago: *Ulivarri Adana* (A, 1458), *Ramido de Vnçurdin* (B, XVI. mendearen hasiera). Bukatzeko, erran dezadan etimoa dardarkari anizkunarekin hasten denean euskal hitz edo aldaerak bokal protetikoa hartukatu duela, ezaguna den bezala. Honetaz ik. bokalei eskainitako atala.

### 2.2. Morfosintaxia

Onomastikaz baliaturik hizkuntza arlo batzuez (konparaziorako Erdi Aroko euskararen joskeraz edo aditz formez) erran dezakeguna ez da asko, baina beste alderdi batzuetan aise datu gehiago ditugu, batez ere, eta espero izatekoa zen bezala, atzizkien eremuan, hauek toponimian ugariak direlako, era berebat antroponimian.

Perpausen gainean zerbait errateko modurik hoberena ditugun testu ttipietara jotzea da, Donemiliagako glosetarik hasirik, garai bateko euskararen berri zerbait ematen digutenez gero, oinarrizko esaldiak izanda ere. Jakina den bezala, X. mendearen erdi aldean idatziak dira, latineko testua argitzea xede. Biziki harrigarria da glosa horietako bi euskaraz egotea, lehenik hizkuntza hau, komunzki, idazteko erabiltzen ez zelako, eta gero gainerako glosa guztiak erromantzez daudelako.

Eztabaidatzen den gauza da euskarazko azalpen edo itzulpen horiek latineko zein zatiri dagozkion. Mitxelenak (1964b: 41-44) uste du aurrenekoa, *izioqui dugu*, latineko *jnueniri meruimur*-i dagokiola, hots, *inuenire meruimus*-i, zer ere den *izioqui* hori, formari so eginik aditza zein adberbioa izan daiteke eta. Ematen duenez, beraz, eta parekatzea zuzena bada, 'aurkitzea, lortzea merezi izan dugu'-ren moduko zerbait erran nahi duke.

Bigarren glosa edo azalpena, *guec ajutu ez dugu*, latineko *«timeo ne* […] *nos, quod absit, precipitemur»* 'beldur naiz, ez bedi holakorik gerta, ez ote garen eroriko'-ren

ondoan dago, erromantzeko *noſ nonkaigamus* 'ez gaitezen eror' glosaren eta latineko *jnge ęna* 'infernura' sintagmaren aitzinetik. Horregatik pentsatu zuen Menéndez Pidalek 'guk ez dugu geure burua botatzen' adiera zuela, baina, Mitxelenaren arabera, egiantzekoagoa da ondoren ageri den *Non nobis sufficit*-en euskarazko itzulpena izatea, hau da, horren glosa den *non conuienet a nobis* 'ez zaigu on', 'ez zaigu egoki' erromantzearen baliokidea.

Ikusten den bezala, bietan *dugu* adizkia daukagu, eta horregatik erran da glosa-egilea nafarra zela. Mitxelenak, ordea, arabarra nahiz errioxarra ere izan zitekeela uste du, *dugu*-ren moduko adizkiak, adibidez, XVI. gizaldiko Landuchioren hiztegian ere azaltzen direlako. Nabarmentzekoa den beste puntua hitz-ordena da, bigarren glosan *ez* erdian baitago kokaturik. Hau, nolanahiko gisan, bizirik dago oraino euskaran, mendeko perpausetan (*egin ez duelako* diogunean, argibidez, ordena hori darabilgu), eta gure literaturan perpaus lokabeetan ere azaltzen da, artetan, berandu arte (cf. Kardaberatzen *«Gure eusquerac bazter oietan guizaseme andien patu onic izan eztu»* egun *«gure euskarak ez du bazter hauetan gizaseme handien patu onik izan»* edo *«gure euskarak bazter hauetan ez du gizaseme handien patu onik izan»* erranen genukeena).

Zernahi gisaz, eta Hernaniko XVIII. mendeko euskal idazlearen testuan ez bezala, Donemiliagako bigarren glosan ez dago herskari ahostunaren ahoskabetzerik, alegia, *ez dugu* dago, ez *eztugu*. *Guec* 'guk' izenordainaz denaz bezainbatean, Mitxelenak 1964ko liburuan (*TAV*en, 42. or.) dio ez duela baitezpada okerra izan behar, Zigoitiko hizkeran forma horixe erabiltzen baitzen. Errenteriarrak, beste lan batean (1971a: 248), erraten du *guec* hori ez dela guztiz argia, baina daitekeena dela *zuek* aktiboaren (ergatiboaren) alderako analogiaz osatua izatea. Perez Lazarragak, XVI. mendean, *guc* eta *guec*, biak, darabiltza, lehena ergatiboan bakarrik eta bigarrena absolutiboan nahiz ergatiboan.

Arrasaten *Ydiacurriçitesqueançelaya* eta *Ydiacurriçatezqueançelaya* erlatibo toponimoa daukagu 1475ean eta 1476an, nire ustez «idiak korritu ziren zelaia», «idiak toreatu ziren zelaia» erran nahi duena, ez «idiek laster egin zezaketen zelaia» edo «idiak korri zitezkeen zelaia» (Salaberri 2008: 622). Honelako *Satzanamen*-ak ugariak zenbait alderditan; beste batzuetan, ordea, aleka baizik ez dira agertzen, edo baño ere ez. Ik. beheitixeago aditzaz mintzatzean dioguna.

Antroponimian alderaketaren barnekotzat aitor daitekeen goitizenen bat bada: *«Juan Martinez dicho Ovea»* (Tolosa, 1475). Anitz dira, bestalde, jende izenetan zein lekuenetan, *barren* eta *goien* superlatiboak dituztenak: *Arbelgoihen* (A, 1025), *Mengano goien* (A, 1025), *Garcia Lopeiz Barrena* (N, 1079), *Iturgoiena* (G, 1141-42), *Barrenessea* (N, c. 1190), *Auria Goiena*, *Auria Goienessea* (N, XIII. m.), *Goceogoyen*, *Gacehouarren* (A, 1257), e.a.

Orain arte «deklinabidea» deitu izan denari doakionez, *-a* artikulua goiz azaltzen dela erran behar: *Larchederra* dago 869. urtean Okako mendietan, Burgosen, apika 945ean alderdi horrexetan ageri den *Larrehederra* bera. Inguru hauetan, bestalde, *Faranlucea*

dugu 947. urtean, egun *Haranluzea* idatziko genukeena, hastapenean aspirazioa duela. Zernahi ere den, Anso ibarrean, (Huescan, Erronkaribarko mugan), *Aranna* agertzen da 828. urtean, hain segur ere geroago, 1027an, haitz baten izena den *Aranya* bera.

Hamaikagarren mendetik aitzina anitzetan aurkitzen dugu *-a* artikulua euskal onimoetan: *Hurigurenna* (A, 1025), *Larrea* (A, 1025), *Olhaerrea* (A, 1025), *Ezcurra* (N, 1032), *Licagorria* (N, 1027), *Yçiçuloa* (N, 1034), *Arranoarria* (N, 1056), *Xemen Laburra* (N, 1072), e.a. Zenbait aldiz toki izena artikulurik gabe azaltzen da aurreneko lekukotasunetan, baina mugatzailearekin gero: *Heinhu* (A, 1025), *Eguinno* (1062), *Eginoa* (1066), *Eguinoa* (1257); *Elhossu* (A, 1025), *Helossua* (1257), e.a.

Erdialde-sartaldeko hizkeretan ohikoa den *-a* + *-a* > *-ea* disimilazioaren lehen testigantza, dakigunez, Arabako 1025eko *Elhorzahea* da, eta bigarrena Errioxako 1156ko *Garci Olhea* (ik. hasperenari eskaini atalñoa). Geroago, gertakari berari zor zaizkio 1353ko *Oleaga* (G), 1388ko *Açaloleaga* (B), 1465eko *Goycoolea* (G) eta abar. *Argorta* (B, 1388), *Ganecogorta* (B, 1457), *Burugorta* (B, 1467), *Dolara* (G, 1475), *Ardinogorta* (B, 1498) eta beste disimilazio beraren ondorio dira.

1479ko *mugaja*-n (G, ik. 2.1.1. atala) hiatoa segurtatzeko [j] sartu dela dirudi, ondoren Etxepareren lanean (*izan daia?* 'izan al da?', *jarri ziraia?* 'jarri al zara?'), eta egun mintzo batzuetan gertatzen den eran. Zaraitzun oraindaino bizirik egon den *eskolara* 'eskola'-ren tankerako absolutiboa XII. mendeko Aimary Picaud erromesaren *elicera*-n egon liteke (*«ecclesiam [uocant] elicera»*), Mitxelenak dioen bezala adlatiboa ('elizara') ez bada bederik.

Zenbait aldiz, baina arrunki beranduxko, XV. mendean eta, artikulua pluralean ere opatzen dugu, *Oreryturriac*, *Pagamunoac* (G, 1445), adibidez. Bestalde, XIV. mendeko nafar otoitzeko *gomendatu gura* sintagman, Mitxelenaren iruditUan (1964b: 59), Nafarroako erdi-ekialdeko eremu zabal batean ohikoa izan den *gura* 'hura' adjektiboa dugu, Erroibarren eta Aezkoan oraino entzun daitekeena.

Gradu hurbileko artikulua antroponimian frankotan aurkitzen dugu, eta toponimian ez da ezezaguna: *Blasco Zailo* (N, 1156), *«Per Arnalt, dit Mandarro»* (NB, 1350-53), *Johan Sagarro* (N, 1366), *Garcia Arozo* (N, 1366), *Pes Surio* (N, 1366), *Lope Hederro* (N, 1366), *Pero Churio* (A, 1460), *el monte de Arizavalo* (G, 1470), *«Juan de Ybarra, dicho Çabalo»* (B, 1489), *«Joan de Yvarrolaça, dicho Çatarro»* (B, 1490), e.a. Partitiboa XII. gizaldiko Aimery Picaud erromesaren *uric* (*«aquam [uocant] uric»*) hitzean dago.

Ergatiboa dela eta, lehen lekukoa aipatu dugun Donemiliagako glosako *guec* 'guk' da; XIV. mendeko nafar otoitzean *«Lur<r>ac dac[a]r og[ia], çoçac ardan bustia»* dago, alegia, «lurrak dakar ogia, zotzak, mahatsondoak ardo bustia edo muztioa». Nafarroako Foruan *gayçes berme* eta *ones berme* dugu, hots, eta Mitxelenak (1964b: 55) dioenez, auzi jartzailearen eta akusatuaren bermea, hurrenez hurren. Hau goi nafarreraren alderdi batean ibiltzen den *-(e)s* instrumentalaren aurreneko lekukotasuna dela gehitzen du errenteriarrak.

Ablatiboa lehen aldiz Dorrao aldeko 1197ko *Latorco urenic erdia* toponimoan egon daiteke; Mitxelenak (1971a: 246) «gehiago edo gutxiago ablatiboa» den partitibotzat hartzen du. Irudi luke *-(e)rean* bukaeraren aldaera baten aitzinean gaudela, 'Lator aurkintzako uretik erdia'-edo erran nahi lukeenaren aitzinean (Perez Lazarragak *-reanic* ere badauka, *-rean* ez ezik, *lecurean*, *lecureanic*, adibidez), apika '*Latorco uren*-en erdia' (*ibid.*). Errenteriarrak (1958: 38) bere buruari galdegiten dio noraino iristen ote ziren antzina *-(e)rean* ablatiboa eta *-ti* prosekutiboa. Aipatu toponimoaren interpretazioa zuzena balitz, lehena, XII. mendean, gutxienez Ergoienerriraino iristen zela ondorioztatu beharko genuke. Zuazok (2012: 111) dio beharbada Arabatik hedatu zela.

Onomastikan gehienik edireten dugun deklinabide kasua, ezbairik gabe, leku genitiboa da, 1070eko *Bazterrecoa* (N, 1070) toponimotik hasirik. Gero nahi bezainbeste opatzen ditugu kasu hau daramaten egitura antroponimiko eta toponimikoak, batez ere Nafarroako dokumentuetan: *Orti Erroco* (1103-1120), *Yssuyneta goyticoa* (1197), *Garcia Çubirico*, *Açeari Guruciricoa*, *Garcia Mendi Urrucoa*, *Domicu Lapurdico* (XIII. m.), *Pedro Eliçaechecoa* (1212), *Garcie Ortiz done Miqueleco* (1229), *Vagadar Huarte Vidaldecoa, Armeaca Iraguicoa* (1284), e.a.

Bestalde, izen berezia denean ez da *-e*-rik azaltzen oinarriaren eta hondarkiaren artean, eta hura sudurkariz akitzen delarik *-go* ohi da hau, baina *-ko* daukagu alboko eta dardarkari gibelean*: Lope Olcozco* (*Olkotz*, 1157), *Domeca Navaçco* (*Nabatz*, XIII. m.), *Dota Ovanosco* (*Obanos*, XIII. m.), *Garcia Eulzco* (*Eultz*, XIII. m.), *Garcia Oyarzavalco* (*Oiar(t)zabal*, XIII. m.), *Garcia Çumelçquo* (*Zumeltz*, 1230), *Toda Osacarco* (*Otsakar*, 1252), *Sancha Gardelaynngo* (*Gardelain*, 1366). 1220ko *Miquele Ydoico* eta 1233ko *Miguel Ydoyeco* lagun bera zatekeen, ez dakit seguru, baina, zernahi gisaz, bistan da *-oį* diptongoarekin bukatzen ziren hitzetan zalantzak zeudela hondarkia oinarriari eransteko tenorean, tarteko *-e-* bokala paratu edo ez.

Mitxelenak aspaldixko adierazi zuen bezala, garbi bereizten dira sintagma mugatuak eta mugagabeak: *Garcia Bazterreco* (N, XIII. m.), segur aski *Garcia Bazterra* gisa ageri den berbera, *Guarcia Cavalco* (1257) 'Garzia *Zabal* herrikoa', baina *Lope Çavaleco* (XIII. m.), hain segur *Zabala* zeritzan etxekoa edo aurkintzakoa. Dena dela, agiri berean eta elkarren jarraian *S. Larraingo* eta *Domicu Larrainecoa* ditugu 1226an (N). Egun bezala, artikulua lekutu egiten da, izenak leku genitiboaren hondarkia hartzean, normalki behintzat: *Aramendia* (N, 1209) eta *Pero Aramendiquo* (1286); *Errea* (N, 1274) eta *Açeari Erreco* (1248); *Larrea* (A, 1305) eta *Ochoa Larreco el biexo* (1500); *Mendigorria* (N, 1074) eta *Sandor Mendigorrico* (1350), e.a.

Kasu hau daramaten sintagmetan garbi ikusten da, lehenik, hondarkia duen osagaia bukaeran joaten dela, nahiz *Sorogoyengo Meaca* eta *Iriondoco soroa* (N, 1242) ere edireten dugun. Gero, argia da herri, ibar eta aurkintza zabalagoen izenekin aldaera mugagabeak

erabiltzeko joera, *Garce Arraiçaco*, *Toda Periz Baztango* (N, 1330), erraterako, eta oikonimoekin forma mugatua ibiltzekoa edo, behintzat, artikuluduna maizxko agertzekoa: *Eneco Iriartecoa* (N, 1205), *Domicu Errotacoa* (N, 1257), *Eneco Urruticoa* (N, 1366). Guztiaz ere, anitz aldiz ez dakigu leku genitiboa daramana xuxen zer den, etxe izena edo leku izena (*Açeari Guruçiricoa*, N, XIII. m., adibidez), eta zalantza franko ikusten dira: *Semen Baçterecoa* (N, 1157) vs. *Urracha Bazterreco* (N, XIII. m.), *Eneco Iriartecoa* (N, 1205) vs. *Eneco Iriarteco* (1213), *Domeca Gamaracoa* (N. XIII. m.) vs. *Lope Gamaraquo* (N, 1283).

Bestalde, beren baitan herri izena biltzen duten antroponimo egituretan *Ansso Ollacarizquetaco* (N, XIII. m.) bezalako sintagma mugagabeak ugariak izan arren, toponimia txikian badaude, aspaldidanik, *Leyçarduya Cilueticoa* eta *Ama Jaureguiaga barrena Auriçchoa*-ren modukoak (N, 1110), tartean *Zilbeti* eta *Auritz* herri izenak egonagatik ere. Bukatzeko, erran dezadan *Pero Iturrietaco* (A, XIII. m.) edo *Sancha Bicuetaco* (N, 1256) erakoetan *Pero Iturri* + *-etako*, *Santxa Biku* + *-etako* nahiz *Pero Iturrieta* + *-ko* eta *Santxa Bikueta* + *-ko* izan dezakegula.

Toponimian zenbait aldiz azaltzen den beste kasua inesiboa dugu eta, ardurago, honen aztarrena den *-ea* bukaera, hots, sudurkaria galdu arren *-ea* atxiki duen forma: *More Bilibilea* (N, 1002), *Aranea* (N, 1059), *Legarrean* (N, 1202), *«Otra pieça Donna Maria Uidean* […] *Dos pieças Nouare Uidean* […] *Otra pieça Guessaluidean»* (N, 1246), *«Larrandoren bi sarohe* […] *Aranrriztoyen* (sic) *bi sarohe»* (N, 1284). Inesibo plurala XIV. mendeko nafar otoitz herrikoian azaltzen da, *liburuetan* sintagman; testu berean *egunean* singularra ere badago, baita *jruretan* forma apika mugagabea ere.

Adlatiboa Erdi Aroa igaro-eta anitz aldiz aurkitzen dugu onomastikan, toponimian bereziki, baina lehenago bakanka baizik ez da agertzen: *«septima est iuncta vie de Ilarvidera»* (N, 1249), *Sancho Gora* (N, 1366).

XIV. mendeko Nafarroako herri otoitzean genitibo singularraren lekuko garbia dugu: *Jangoicoaren apostru maestru*. Honen aldaera zaharra herrialde bereko 1110eko *Orcire Çorita*-n dukegu (*Ortzantzurieta* egun), geroago, 1284an, *Orçiren Çorita Çaharra*, *Orçiren Çorita Soroa* toponimoen osagaitzat edireten duguna. Hauen lehen elkargaian *Ortzi* 'jainkoa' eta *-re*, *-ren* dauzkagu.

Egundaino posesiboetan gorde den aldaera zaharra *Iaun Ortire Semea* egitura patronimikoan ere badukegu, 1125ean. Artaxoan sudurkaririk gabeko forma horixe ibiltzen zen: *Ansare gortea* ('Antsaren gortea', 1583), *Anchapele gortea* (1549az geroztik, 'Antso, Antxo Txapelen korralea'), *Errabiare gortea* ('Errabia izengoitia duenaren gortea', 1593), *Gile gortea*, *Gile olibadia* ('Gilen korralea', 'Gilen olibadia', 1556tik aitzina) eta beste. Garai berean, diodan bidenabar, Oteitza herrian (Iguzkitzaibar, N) genitiboak bazuen sudurkaria: *Mariaren gortea* (1574), *Pa[s]coalen gorteac* (1578). Erdi Arora

itzuliz, ez da bitxia genitiboa han edo hemen kausitzea, toponimoetan, oikonimoetan eta hondar hauetan iturri duten pertsona izendapenetan: *Sanso Urraquarena* (N, XIII. m.), *Aycita Berroaren Aldecoa* (N, 1284), *Miguel Goycoarena* (N, 1350), *Garcia Ansorena* (N, 1366), e.a.

Aditzaz kestione, XV. gizaldiko kantoreetara iritsi aitzinetik ez da aise adizkiak dokumentazioan aurkitzea. Guk hauek opatu ditugu: *eban* 'ebaki' (*Yraevan*, G, 1452; *Sarriburuebana* A, 1456), *edun* (*Onbaçendu*, N, 1110, *Onbacendu*, 1259; Mitxelenak [1964b: 38] dio Nafarroako foruan ageri den *Onbaçendu avaria*-ren laburtzea datekeela), *ekarri* (*lur<r>ac dac[a]r*, XIV. gizaldiko Nafarroako herri otoitzean; *Veydacar*, herri hustua, G, 1313), *eman* (*norc berea demana*, XV. gizaldiaren bukaera, Urrizola 2007), *erazegi* 'piztu' (*arguiçagui eraiçeten*, XIV. mendeko otoitza), *ero* 'hil' (*«dende a[l] lugar que llaman Juan Ahoraena»*; *«al lugar que llaman Jaunaeraenla*; *el lugar llamado Juanaeraena»* «jauna ero, hil zuten lekua»; *Arçaheraena* «hartza ero, hil zuten lekua», G, XV. m.), *etzan* (*Ochaçecan*?, N, 1232; *Yladaçan Çelaya*, B, 1498), *ibili* (*dauilça*), *irakurri* (*liburuetan iracurten,* herri otoitza, N, XIV. m.), *jario* (*Peidro Garidario*, N, 1240; *Pero Periz Garidario*, N, 1366), *kurritu* (*Ydiacurriçitesqueançelaya*, *Ydiacurriçatezqueançelaya*, G, 1475, 1476; ik. gorago).

Atzizkiei dagokienez, batik bat edo bakarrik onomastikoak direnak (*-aga*, *-(a)nda*, *-(a)ndo*, *-(a)nga*, *-da*, *-egi*, *-et*, *-eta*…) bazter utzita ere, sail politta osa daiteke leku eta pertsona izenetan aurkitzeaz gainera eguneroko mintzoan oraindik bizirik daudenekin:

*-ai*, *-zai*: *artzai*, *errotazai*, *igurai*, *salzai* 'zaltzaina' edo 'azienda sailzaina' apika, *unai*, *urdai* 'urdezaina, zerrizaina'.

*-ar*, *-tar: aldar* 'Aldea herrikoa', *aniztar* 'Anitz herrikoa', *arabar*, *etxetar*, *lanar* 'Lana ibarrekoa', *nafar*.

*-ari*: *balestari*, *borrokari*, *dendari*, *errementari*, *ezkutari*, *gelari*, *laborari*, *merkatari*, *zapatari*, baita *burgari*, *erramari*, *gondari*, *matailari* eta *zanpruinari* ere, beharbada.

*-doi*, *-dui*, *-di: arantzabelzti*, *arantzedi*, *askardi*, *bagadui* eta *pagadi*, *ezkurdi*, *ezpeldui*, *galardi*, *gaztainadi*, *gerezidi* eta *keriztui*; *gorosti*, *gorostui* eta *korostidi*; *gurbisti* eta *urbizti*, *hariztoi* eta *hariztui*; *hurreizti*, *hurrextui* eta *hurriztui*; *idoi*, *ihidi*, *ilardi* eta *ilardui*, *intsusadi*, *iradi* eta *iradoi*, *isasti* eta *isastu(i)*, *lapasti*; *leizardui*, *leizardi*, *lexardi* eta *lizardi*; *lohidi*, *ogidui*, *sagardi* eta *sagardui*, *sagasti* eta *sagastui*; *txertudi*, *txertudui* eta *zertudi*; *urkidi*, *zamakidi*, *ziaurdi* eta *ziordui*, *zizadi*, *zubeldi*, *zuhazti*, *zumizti*, baita *mainduradi*, *martxaletadui* eta *mozti* ere segur aski.

*-dun: erdaldun*, *zaldun*, *zulodun*. *Orti evilduna* (Artaxoa, N, 1157) egitura onomastikoaren bigarren osagaia 'ibilduna', 'ibiltuna' dateke, 'ibiltaria', edo 'oinez ibiltzen dena', herri bereko *zalduna*-ren (*Lope Zalduna*, 1119) nolabaiteko antonimoa. Honek erran

nahi duke Artaxoan, denbora hartan, *ebili* erabiltzen zela, ez *ibili*.
*-gile: bidagile*, *bastagile.*
*-gin: harakin*, *okin*, *orrazkin*, *zamargin.*
*-ka: ateka*, *mehaka* eta beharbada *aldaka*.
*-kor: bikor*.
*-txo: ihartzatxo*, *soratxo*, *zelaitxo*, *zubitxo*.
*-(t)zale* ('-tzaile'): *arra[n](t)zale.*
*-tze: artatze*, *elortze*, *ezkitze*, *gesaltze*, *lihatze*, *olatze*.

**2.3. Hiztegia**

Ongi hastekotan, Aimery Picaudek Erromesbidean bildu zituen apurrak aipatu behar nituzke lehenbizi (Mitxelena 1964b: 50-51): *andrea*, *Andrea Maria*, *aragui*, *araign* 'arraina' (*arraĩ* edo *arrain*), *ardum* (*ardũ*, 'ardoa'), *belaterra* 'bereterra, apeza', *echea*, *elicera* 'eliza(ra)', *ereguia* 'erregea' (*erreguia* Beriain nafarraren lanetan 'erregina' da), *gari*, *iaona* 'etxeko jauna', *Iaona domne Iacue* 'jaun done Jakue', *ogui*, *Urcia* 'jainkoa', *uric* 'urik' segur aski, hots, eta goraxeago erran dudun moduan, *ur* izenaren partitiboa.

Hiztegia biziki eremu zabala da eta gauza anitz daude oraino, Erdi Aroko dokumentazioan, bildu eta aztertzeko, gaurdaino jaso eta ikertu direnez lekora (cf. Arzamendi 1985). Lan hau, jakina, ez da hori egiteko tokia, baina aipatu agirietan azaltzen diren eleetako batzuk ekarri nahi nituzke hona, beha dugun altxorraren iragarletako. Egia da gehienak antroponimiatik eta toponimiatik hartuak direla eta, horregatik, kasu eman behar dela, kontuz erabiltzekoak direla, baina egia da, orobat, horien bidez gure hainbat hitzen lehen agerraldia aise aitzina daitekeela. Hona hemen, beraz, hitz eta item lexiko batzuk:

> *Adiskede* 'adiskidea', *ahozabal*, *ahuntz*, *aketz*, *aldare*, *alkate*, *alor*, *altxirri*, *amets*, *ametz*, *amu*, *andapara*, *antzar(a)*, *apeztiko* eta *ipistiko*, *argal*, *arima*, *arlot(e)*, *arrano*, *astigar*, *atsegin*, *azal*, *azkonarro*, *azpil*, *azti*, *bake*, *baratza* eta *baratze*, *baratzuri*, *barber*, *bargo*, *barruti*, *baso*, *basasagar*, *bastart*, *batzarre*, *bederatzi*, *berde*, *bertute*, *bete*, *bidakurutze*, *bildots*, *bizar*, *borru*, *borte*, *bortu*, *bortz*, *buar*, *burdin*, *bustan* eta *buztain*, *egurtza*, *ehun*, *eluts*, *emazte*, *eperdi*, *ergel*, *eskilara*, *eztarri*, *ezti*, *galburu*, *gari*, *garratz*, *giristio*, *gizon*, *goskor* eta *koskor*, *gurbe*, *gusu* ('[lehen]gusua'), *harregi*, *haustarri* eta *hausterreitz*, *hirur*, *ikorte* edo *ikorta*, *jangoiko*, *jantzi*, *kareobi*, *laban*, *lanberri*, *larru* eta *narru*, *laun*, *lera*, *lihatze* eta *lihatza*, *maite*, *makila*, *marrubi*, *maspil*, *matela*, *meza*, *mimen*, *mingorri*, *miru*, *moko*, *monja*, *mugi(tu)*, *ogen*, *olajaun*, *ordu*, *ortu*, *ospin*, *plaza*, *portale*, *sakan*, *sakon*, *sengazte* (*haurgazte*-ren antzekoa, irudiz), *serore*, *teila*, *teileria*, *triku*, *txertu* edo *zertu*, *txirri(a)* eta *txurru*, *txori*, *ubide*, *udare*, *upa*, *usain*, *zain*, *zakar*, *zaldi*, *zango*, *zatar*, *zehar*, *zentzu*, *zentzun*, *zerri*, *zezen*, *zidor*, *zikin*, *zoriburu*, e.a.

Nabarmentzekoa da, baita ere, zenbait elkarturen bitartez bideratzen diren kontzeptuak: *ardanburu*, *ardangrina*, *begieder*, *begiurdin* eta *beginabar*, *bizinahi*, *egurbide*,

*errekabegi*, *eztigrina*, *gaitzeske* (*buscamal*, *malbusca* erdaraz), *gaztaurdin*, *usadorre* eta beste.

**Laburdurak**

A (Araba), a.p. (adierazpen pertsonala), *AV* (Mitxelena 1997), B (Bizkaia), big. (bigarrenkaria), dok. (dokumentazioa), elkar. (elkartua, elkarketa), erd. (erdara), eusk. (euskara), *FHV* (Mitxelena 1977), G (Gipuzkoa), gazt. (gaztelania), L (Lapurdi), m. (mendea[k]), N (Nafarroa), NB (Nafarroa Beherea), *RS* (*Refranes y Sentencias*, Lakarra 1996), *TAV* (Mitxelena 1964b), Z (Zuberoa).

**Irakurgai osagarriak**

Apraiz 1953, Arzamendi 1985, Caro Baroja 1945, Goihenetxe 1966, Jimeno Jurío 1997, Merino Urrutia 1935, Mitxelena 1973b.

5.

# EUSKARA ARKAIKOA

Céline Mounole
Joseba A. Lakarra

## SARRERA HISTORIKOA: 1400-1600

(Juan José Larrea)

### 1. EKONOMIA ETA DEMOGRAFIA

Kostaldeak xv. eta xvi. mendeetan ezagutzen duen dinamismo ekonomikoak ez du parekorik euskal historian Industrializaziora arte. Makailoaren eta balearen arrantzak Ipar Atlantikoan zehar Ternuaraino eramaten ditu Bizkaiko, Gipuzkoako eta Lapurdiko arrantzaleak. 1560 urteetan 120 euskal itsasontzi inguru dabiltz lanean soilik Amerikako kostaldean. Bilbotik Baionara era guztietako barkuak egiten dituzten ontziolak ugaltzen dira. Mendebalde osoko ekoizpenaren garapenarekin batera, xiv. ean hasitako burdingintzaren zabalkundea areagotzen da. Bizkai eta Gipuzkoako erreka bazter guztiak zeharrolez josita agertzen dira, xvi. mendean hirurehun inguru egon arte. Gehiena kanporako egiten da —Ingalaterrarako, Flandriarako, Ipar Frantziarako—, euskal lurraldeen txikitasunaren proportziorik ez duten kopuruetan: Erdi Aroaren bukaeran, Mendebaldeko Europa osoko burdinaren hamarrena bizkaitarra dela kalkulatu da. Garraiolaritzan ere euskal presentzia zabaldu egiten da. xiii. mendetik Flandria, Ingalaterra eta Bizkaiko Golkoaren artean aritu badira, batez ere Gaztelako artilea, euskal burdina eta Ipar Atantikoko oihalak garraiatuz, xv. mendean Andaluziara ere heltzen dira gari bila eta handik Mediterraneora. Merkataritzan, Baiona nazioarteko bidegurutzea da aspalditik, Frantzia, Gaztela, Ingalaterra, Flandria eta xvi.etik Amerikaren

artean. Gainera, 1451eko frantses konkistaren ondorioz erreinuko atea bihurtuta, koroaren inbertsioak jasotzen ditu. Bizkaitarrek eta gipuzkoarrek ordea gaztelauekiko eta gaskoiekiko lehia tematiari eutsi behar diote merkataritzan duten esparru txikia zabaltzeko. 1511ko Bilboko kontsulatua, bilbotar merkatarien eta burgostarren arteko norgehiagokaren denboran sortu zen.

Zabalkunde honen lurralde-sakontasuna irregularra da. Bizkaia eta Gipuzkoa osorik txertatzen dira hazkundean. Burdingintzari bakarrik erreparatuz, 300 oletako lanetik bizi diren familiek populazioaren ehuneko seia osatzen badute, biztanleen laurdenerako sortzen dira urte osoko zein sasoiko bizibideak, meatz eta basoetatik notariotza eta errenterietara. Sarrera berriek elikadura inportatzea ahalbidetzen dute eta lurrak lehen baino askoz jende gehiago manten dezake. Barrukalderantz ordea gauzak ezberdinak dira. Gasteiz merkatal-geografiaren katebegi garrantzitsua da; maila apalago batean beste hiri batzuek ere parte hartzen dute ekonomia berriaren onuretan. Baina gainerako arabar lurraldeek nekazaritza tradizionalera lotuta jarraitzen dute. Nafarroan Santiago Bidea itzal bat baino ez da. Haran atlantikoetan burdingintza garatu da XIV. mendetik, baina ezin dio bizkaitar-gipuzkoar konpetentziari eutsi. Nekazaritza eta abeltzantza dira ekonomiaren oinarriak eta Koroaren politika fiskalak laborarien gainera jaurti du XIV. eko krisiaren zama. Kostaldean ez bezala, zuzpertze demografikoa oso geldoa da: XIII. mendeko bukaeran 30.000 familia inguru bizi baziren Nafarroan, 18.000ra jeitsi dira Izurrite Beltzaren (1348) ostean, eta 1427an antzeko mailetan jarraitzen dute. Izurrite aurreko biztanle kopurura XVI. mendeko erdialdean baino ez dira iritsiko.

## 2. HISTORIA POLITIKOA

Errejimen Zaharreko geografia eta egitura politikoen finkatzeak bi eremu marrazten ditu. Aspalditik Gaztelan zeuden Bizkai, Gipuzkoa eta Araban Bandoen Gerrek erabakitzen dute hirietako burgesen eta nobleen arteko botere banaketa; lehia honetan Foru-Errejimenaren oinarriak jartzen dira. Ekialdeko lurraldeetan, Frantziako koroak Ipar Euskal Herria irabazten du eta Gaztelakoak Nafarroa.

Bizkaian eta Gipuzkoan errenta tradizionalen krisiari hazkunde areagotuak jarraitu dio, eta hor ere agintari zaharrak maiz aberastasun berrietatik at geratu dira. Nobleen erreakzioak eta paisaje sozioekonomikoaren berezitasunek Bandoen Gerren nondik-norakoak esplikatzen dituzte: aurrena nobleek ez dute eragin handirik erregearen gortean, hurrena ekonomia berriak burgesak, artisauak eta bestelako sektore hiritarrak indartu ditu, azkena boteregune zentralik gabeko lurraldeak dira. Tradizioz gerra hitza erabiltzen badugu ere, bataila gutxi egon ziren. Segadak, kabalkadak, erailketak, erreketak edo lapurketak

izan ziren nagusi XIV. mendeko bigarren erdialdetik XV.eko hirugarren laurdenera. Nobleek indarkeria erabili zuten laborarien zamak astuntzeko, herri-lurrez jabetzeko, bidesariak eskatzeko, hirietako karguak eta errentak eskuratzeko, bide-lapurretan aritzeko edo «babesa» eskeintzeko. Leinuen interesak elkarren lehian sartu ziren. Eraso, mendeku eta aliantzen amaraun batek harrapatu zuen gizarte osoa. Gatazken dinamikak etsaitasunak bezala nobleen koalizioak ekarri zituen, bandoak alegia. Jokoaren erdian Ahaide Nagusiak zeuden, leinu nobleen defentsaren eta mendekuaren arduradunak. Ahaide Nagusi bakoitzaren indarra erlazio-sare batek sustatzen zuen: senideak, gomendatuak, treguatuak, bai eta lan zikinetarako dorrean zituen gaizkileak ziren haren gudakideak.

Lehen erresistentziak lokalizatuak izan ziren. XV. mendeko hasieratik ordea, bortizkerien eta gehiegikerien biktimak ziren herritarrak ermandadeetan antolatu ziren, hirien gidaritzapean. Ermandadeak funtsean hau ziren, erregearen baimenaz bakea bermatzeko eta justizia azkarra inpartitzeko miliziak, hiri eta herrien ordezkarien batzarrek gidatuak. Gatazketan zehar hirietako burgesek ermandadeak lurralde mailako botere politikoa kontrolatzeko tresnak izan zitezkeela ulertu zuten. Koroaren laguntzaz, jakina. Henrike IV.aren eraso orokorrak nobleen porrota erabaki zuen 1457an. Gero Errege-erregina Katolikoen mandatariek errepresioa eta akordioak konbinatu zituzten lurraldea baketzeko. Araban indar-oreka ezberdina zen oso. Gasteizen bakarrik zegoen burgesia sendo bat. Gaztelako oligarkiaren kideak ziren Mendozatarrek, Aiaratarrek, Gebaratarrek edo beste batzuek erregeenganako hurbiltasuna eta eragin politikoa baliatu zituzten karguak eta «mesedeak» eskuratzeko. Arabako lurraldearen ehuneko larogeia erregearen jurisdikziotik nobleenera igarota zegoen XIV. mendeko bukaeratik. Ermandadeek legez kanpoko usurpazioak deuseztatu zituzten eta leinuen bortizkeriak akabatu, baina ez zuten burgesen garaipena ekarri.

Europa osoan monarkiak indartzen ari ziren garaian, Nafarroak kontrako bidea jarraitu zuen. Karlos III hilda (1425), erreinua nobleen alderdikerien, errege-erreginen kanpoko interesen eta inguruko monarkien lehien artean amildu zen. 1451-1461ko gerra zibilaren ostean, geroago Albret-eko etxearekin elkartuko zen Foix-eko etxeak eskuratu zuen koroa. Bearnoko bizkonde subiranoak ziren eta Frantziako erregearen feudataririk boteretsuenak Hego Frantzian. Nafarroa independientearen azken hamarkadetan Frantzia eta Gaztela-Aragoi arteko politika autonomo bat izaten ahalegindu ziren, baina ezin: monarkia handi biak lehiakideak ziren Pirinioetan zein Italian eta nafar nobleteria beaumondarren eta agramontarren bandoetan hautsita zegoen gerra zibiletik. Hainbat urtez, Nafarroa ez da Gaztelaren protektorego bat baino askoz gehiago. 1512ko konkista Frantziaren kontrako gerraren episodio bat izan zen: Fernando Aragoikoak Nafarroaren kontrol estrategikoa bermatzeko egin zituen eskari guztiak betetzen ez zirela ikusirik, Albako dukearen tropek erreinua hartu zuten beaumondarren laguntzaz. Nafarroa

erraz lortuta, 1515ean Fernandok Gaztelara lotu zuen. 1516-1530 artean Karlos I.ak zuhur jokatu zuen inkorporazioa bermatzeko: berezko erreinua bezala izango zuela zin egin zuen, Nafarroako Erret-kontseiluaren eskuetan utzi zuen gobernua, indarra erakutsi zuen Albretarren kanpaina militarren aurrean, eskuzabal agertu zen konkistaren kontrako noble guztiekin. 1527tik Nafarroa Beheretik erretiratu zen defentsa Pirinioetan errazteko. Bandoen arteko liskarrak baretu ziren eta erreinuaren erakundeak indartu. Geroago Albreteko etxeko errege-erreginak kalbinismora bihurtu zirenean, hegoaldeko nafar askok beraien baitan gorde ziezaieketen leialtasuna hautsi zuten. Gainera Nafarroa atlantikoko parrokiak Baionako elizbarrutitik Iruñekora inkorporatzeko argudioa eskeini zuten. 1583an Gorteek atzerritar deklaratu zituzten Nafarroa Behereko biztanleak. XVI. mendeko bigarren erdialdetik aurrera, nafar ugari Inperioaren zerbitzura jartzen hasi ziren, nobleak goren mailako aginte-postuetan Espainian zein Ameriketan, mendialdeko aitonen seme xume asko armadan, odol-garbitasuna baliatuz.

Nafarroa birkonkistatzeko itxaropena galduta eta gaztelauen armada Luzaidera erretiratuta, Albretarrek errege titulua ematen zien erreinuko zatia —1.290 $km^2$ eskas— berreskuratu zuten, nahiz eta egoitza Paben mantendu. Juana III.aren kalbinismora bihurtzeak erlijio-gerrak ekarri zituen Ipar Euskal Herrira. Populazio gehienak profesatzen zuen katolizismoaren kontrako neurriek nobleen arteko gatazkak astindu zituzten eta koroaren aurkako erreboltak piztu. Juanaren semea, Nafarroako Henrike III (1572-1610) Frantziako Henrike IV izatera heldu zen 1589an. Katolizismora bihurtuta, Nanteseko Ediktoa aldarrikatu zuen (1598) erlijio-gerrak amatatzeko, erreinua berregin zuen eta Frantziako monarkiaren urrezko XVII. mendearen oinarriak jarri zituen. Handik Iraultzara arte, haren ondorengoak Frantziako eta Nafarroako erregeak izan ziren.

Lapurdi eta Zuberoa beste bide batetik sartu ziren Frantziako erreinura. Ehun Urteko gerraren azken aldian frantsesek Akitania hartu zieten ingelesei. Zuberoaren konkista 1449an bukatu zen, eta Lapurdirena bi urte geroago. Biak erregearen jaurgora inkorporatu ziren. Zuberoan Frantziaren barruko lehen hamarkadak latzak izan ziren, bearnotarrei karguetan ematen zitzaien lehentasuna erlijio-gerrekin nahastu baitzen. Ehun eliza baino gehiago suntsitu ziren. Lapurdin ordea erregearen mandatariek abantaila berriak eman zizkioten Baionari burgesen borondatea erakartzeko eta Lapurdiko nobleak berandu gabe agertu ziren monarkiaren alde.

## 3. ERAKUNDEAK

Araban, Bizkaian eta Gipuzkoan bandoen kontrako ermandadeek lurraldeen agintaritza berria antolatzeko hezurdura eratu zuten.

xv. menderako Gipuzkoako hiriek herri gehienen gainetik zuten hedatuta euren jurisdikzioa. Lurralde osorako lehen arautegi propioak ermandadearen miliziek aplikatu behar zituzten zigor-koadernoak izan ziren. Lehen batzarrak ere ermandadearenak izan ziren. Hauek hiri handietako burges aberatsek kontrolatu zituzten, botoak biztanleriaren arabera banatu baitziren. 1463an behin betiko Gipuzkoako Ermandade eta Batzar Nagusiak eratu ziren, Koaderno Berriaren erredakzioarekin batera. Aldundia ager dadin ordea, 1550era arte itxaron behar da. Burgesia aberatsaren lehentasuna areagotu besterik ez zen egin hurrengo belaunaldietan: 1571ean gutxieneko 50.000 marabediko fortuna behar zen batzarkidea izateko, eta gaztelaniaz idazten jakin. Gipuzkoar erakundeek Koroarekiko harremanak arretaz zaindu zituzten xvi. mendean. Konkistatutako Nafarroa gordetzeko kanpainetan esfortzu militar aipagarria erakutsi zuten. Giro honetan Batzar Nagusiek lehen betekizun fiskalak hartu zituzten. Gaztelako zerga nagusiaren, hau da alkabalaren kobrantza ez zen 1508tik aurrera eguneratu. Errejimen fiskal «leun» batek eta tronkalitatea babesten zuen Zuzenbide Pribatu bereziak kaparetasun unibertsalerako bidea ireki zuten. Hau baina 1608-1610erarte ez zuen monarkiak onetsi.

Bere aldetik, heredentziaz 1379tik erregeek zuten Bizkaiko jaurerrian, ermandadeen mugimenduak burgesiaren eragina hedatu zuen: laborari asko elkartu ziren eta 1394ko ermandadearen koadernoa Bizkai osoan indarrean egon den lehenengo arautegia da. 1452an, Gernikan, erregearen korrejidorearen buruzagitzapean, Foru Zaharra idatzi zen. Arbasoen usadioen erretorika gorabehera, xv. mendeko errealitate sozio-ekonomikoak daude jokoan. Aitonen semeen jarrera defentsiboa antzematen da: ondarearen transmisioa, aberastasun berrietatik baztertuak ez izatea, hiriekiko lehia, baso, ola eta erroten kontrola… Burgesen pisu politiko berria ere agertzen da: Zuzenbide Publikoko xedapenak bizkaitar guztientzat ziren, noble-bilauen arteko muga gaindituz. Honek gehi betidaniko salbuespen fiskalak kaparetasun unibertsalaren ideia ekarri zuen. Hau 1526an idatzi zen Foru Berrian aldarrikatu zen. Harekin Bizkaiko Errejimen Zaharreko legea eta Batzar Nagusien antolaketa modernoa finkatu ziren.

Arabak bere armarrian ermandadearen goiburua darama oraindik: *en aumento de la justicia contra malhechores*. Hemen ere, ermandadea dugu Errejimen Zaharreko lurraldearen arragoa. 1458an eratu zen behin-betiko Arabako Ermandadea. 1463an Koadernoa erredaktatu zen eta Batzar Nagusiak finkatu. Herri eta hirietako prokuradoreek osatzen zituzten Batzarrak, eta hauetatik batzorde iraunkor bat eratorri zen, Aldundiaren hazia. 1476an *juez executor* bat ere bazegoen, Aldun Nagusiaren aitzindaria. Legearen aldetik ordea, nobleek Araban mantendu zuten lehentasuna zela eta, Zuzenbide berezirik ez zegoen eta lurraldea Gaztelako legedi orokorrak arautzen zuen.

Nafarroan xiii.-xiv. mendeetatik zetozen erakundeak egoera berrira moldatu ziren. Gaztelako erregearen izenean erregeordearen irudia agertu zen. Honek agintaritza

militarra zuen eta kargu nagusiak izendatzeko ahalmena. Harekin batera, beti gaztelau baten buruzagitzapean zegoen Erret-kontseilua gobernuaz eta goi auzitegi eginkizunaz arduratzen zen. Gorteek hiru beso zituzten: nobleena, Elizarena —jatorriz leinu nobleetako kideak haiek ere— eta unibertsitateena —hiri onetako burgesek osatzen zutena. Gorteek zerga berriak onartzen zituzten, Foruaren kontrako aginduak salatzen zituzten —arrakasta gutxirekin normalean— eta legeak proposatu. Gorteen betekizunez iraunkorki ardura zedin, 1576an Aldundia sortu zen. Legediaren oinarria Foru Orokorra zen, hots aristokrazia feudalaren pribilegioak bermatzeko XIV. mendean finkatu zen kodea. Izena baino ez du erkide Bizkaikoarekin. Portuez Haraindiko Nafarroa Beherean erreinu-mailako erakundeak sortu behar izan zituzten Albretarrek: Donapaleuko Kantzelaritza eta Txanpon-etxea, Nafarroako Estatu Orokorrak. Frantziako lurraldeen usadioen erredakzioaren mugimenduaren barruan, Forua 1608rako erredaktatu zen, Nafarroako Foru Orokorra lege subsidiario moduan geratu zelarik.

Lapurdiko Usadioak 1513an idatzi ziren erregearen aginduz, betiere Baionakoak eta Lapurdikoak ezberdinduz. Baionako seneskaliaren menpean Baiona bera eta Lapurdi geratu ziren. Baileak deituta, Lapurdiko Biltzarrean parrokietako ordezkariak elkartzen ziren urtean hiru aldiz. Zuberoako Forua 1520an idatzi zen; erlijio-gerren ostean Foru Berria erredaktatu zen, 1611ra arte luzatu zen prozesu batean. Lurralde honetako erakunde-egitura korapilatua zen. Mauleko gazteluzainak baileak izendatzen zituen Pettarrerako eta Basabürürako, eta Estatu Orokorrak bilerazten zituen. Estatu Orokorrez gain, *Grand Corps* izeneko bilkura zegoen, noble eta elizgizonena, eta *Silviet*, etxekojaun guztien ordezkariena. *Silviet*ak sindikoa izendatzen zuen, eta honen menpean deganek parrokiekiko artikulazioa bermatzen zuten.

## 4. KULTURA, IDEIAK, HIZKUNTZA

Elizak Erreformaren aurrean ezagutu zituen astinduek oihartzuna izan zuten gure artean. Durango hiria Frantziskotarren ingurutik jaiotako heresia baten erdigunea izan zen, Busturia, Gipuzkoa eta Aramaiora zabaldu zena eta 1444ean errepresioak ito zuena. Erreforma protestanteak ordea ez zuen hurrengo mendean herritarren atxekimendua lortu. Nafarroa Beherean eta Zuberoan Bearnotik etorritako beste inposaketa bat bezala hartu zen eta erlijio-gerraren zigorra ekarri zuen. Hegoaldean katolizismoaren kanpeoia zen Felipe II.a kezkatuago agertu zen ideia protestanteen sarreragatik mehatxu militarragatik baino. Honek Pirinioetako muga berria ondo ixteko ondorioa izan zuen.

Bizkai-Gipuzkoako hirietako burgesiaren garaipena elikatu zuen diskurtsoa nobleen aurkako igualitarismoarena izan zen. Felipe II.aren monarkian, kaparetasun

unibertsalaren ideiak bat egin zuen odol garbitasunaren obsesioarekin: historiagintzan atzerritar odolak sekula kutsatu gabeko Euskal Herriaren mitoa sortu zen. Euskarari betekizun bat eman zitzaion lehenengoz eraikuntza historiko-ideologiko batean: Penintsularen hizkuntza primitiboa izanik, euskaldunak kanpotarren eraginik jaso gabe biziraun zuten espainol bakarrak zirelako froga bizia izatearena, alegia. Eremu honetan, Esteban de Garibay (1533-1599) batek edo Andrés de Poza (c. 1530-1595) batek ederki biltzen dute euren biografietan Behe Erdi Aroko gizarte-burruketatik garaile atera den klasearen intelektual mota: hiritarrak, merkataritzan edo administrazioan arituak, Ernazimenduko jakintzaz jantziak, negozioen eta monarkiaren zerbitzariak, Inperioko lurretan ibiliak.

Edonora begiratzen dugula, euskararen erabileraz hitz egiten diguten testigantzak biderkatzen dira berrikuntza ekonomiko, erlijioso, politiko zein kulturalekin batera. Euskal baleazaleen negualdiek aztarnak utzi zituzten Kanadako kostaldeko herrien hizkuntzetan; Juana III.aren kalbinismoaren aldeko politikak J. Leizarragaren Testamentu Berriaren itzulpena bultzatu zuen; Bandoen Gerren kronikagileek Behe Erdi Aroko kantak eta eresiak jaso zituzten, bai eta euskararen presentzia barra-barra erakusten duten protagonisten eginak eta esanak ere. Moldiztegiak, humanismoak eta hizkuntza nazionalen ospe berriak eragin zuen uhina euskarara ere heldu zen: poesia profanoak ziren B. Etxepare nafarrak 1545an argitaratu zituenak eta J. Perez Lazarragako arabarrak inprentara bidean utzi zituenak; Gasteizen N. Landuccio italiarrak lehen euskal hiztegia osatu zuen. Prozesu judizialetan euskararen erabilera ahozkoaren eta idatzizkoaren arteko mugak haustera iritsi zen zenbaitetan, deklarazioak zuzenean euskaraz jaso arte. Azken batean, horrelako prozesuren batean noiz edo noiz esanarazi zenari kasu egiten badiogu, euskara deabruaren hizkuntza ere bazen.

Aurreko mendeetan, idazki moten urritasunak landa-mundutik kanpoko euskararen erabileraren arazoa, bereziki aristokraziaren inguruan edo hirietan, zalantza artean utz zezakeen. Orain ordea testuen tipologiaren aniztasunak hau argitzen du, Bilboko ibaiak, Trebiñuk, Tafalla aldeak, Erronkarik, Zuberoak eta Lapurdiko kostaldeak mugatzen duten lurraldean, populazioa proportzio handi batean elebakarra da herrietan eta hirietan; bilauek eta goren mailako nobleek etxean eta bizitza publikoan erabiltzen dute euskara. Baionaren salbuespenarekin, merkataritzan, burdingintzan, nabigazioan… euskara lanaren eta negozioaren hizkuntza da. Ez bakarra, jakina. Haren ondoan, agintarien, merkatarien, garraiolarien, elizgizonen, nobleen eta administratzaileen hezkuntzak eta jardunak gaztelaniaren, gaskoiaren edo frantsesaren —eta gehiago edo gutxiago latinaren— ezagutza eskatzen dute.

# EUSKARA ARKAIKOA

Céline Mounole, Joseba A. Lakarra

## 1. SARRERA[*]

### 1.0. Aitzinekoak[1]

***1.0.1.*** Hizkuntzak etengabe aldatuaz doaz. Hori duela mende batzuetako lekukotasunen aurrean dakusagu errazenik. Har ditzagun, esaterako, *RS*ko esaldiok:

3 *Aberassoc jaya daude, chiro gajooc veti neque, auçooc vere yguy daude veti dabilena esque* [Los ricos tienen fiesta y los pobres cuytados siêpre trabajo, los vezinos también aborrecen siempre al que anda pidiendo];

---

[*] Ikerketa hau Madrilgo MINECOk lagundu «Monumenta Linguae Vasconum (III)» [= FFI2008-04516], «MLV IV» [= FFI2012-37696] eta «MLV V» [= FFI2016-76032-P], Eusko Jaurlaritzaren «Lingüística histórica e historia de la lengua vasca» Talde Iraunkorrarekin [GIC.IT486-10] eta UPV/EHU-ko UFI11/14rekin lotua da. Egileek MVLeko kideei era askotako laguntza eskertu nahi diete, bereziki Blanca Urgell Euskararen Historiako irakaskideari. Testu honen aurreko bertsio bat erdaraz jarri duten Borja Ariztimuño eta Eneko Zuloagari, orobat Jose Ignacio Hualderi zor dizkiegu idaztaldi hau ere asko hobetu duten hainbat zuzenketa eta iradokizun.

1. Artikuluan zehar laburdura hauek erabili ditugu, ahal delarik *Orotariko Euskal Hiztegi*koak baliatuz, euskaratuz edo haien eredura sortuz: A: Arabako euskara, B: bizkaiera, BN: behe-nafarrera, G: gipuzkera, GN: goi-nafarrera, L: lapurtera, Z: zuberera; *TAV*: *Textos Arcaicos Vascos*; Abend: Abendañokoaren kantua, Abentx: Abendañotxearen heriotza, Amdx: Juan Amenduxekoaren olerkia, ArrErr: Arrasateko Erreketaren kantuak, Bak: Bakedanoko ezkontza-fedea, Bañ: Martin Bañez-en eresia, Beor: Beorburuko ezkontza-fedea, Beot: Beotibarko guduaren kantua, Bet: Betolatza, Bret: Bretaniako kantua, Butr: Butroeko andrearen eresia, CrZh: Credo zaharra goi-nafarreraz, Tol: Tolosako ezkontza-fedea, ElizProz: Eliz prozesua goi-nafarreraz, Errk: Erronkeriazko formula Jainkoaz arnegatzeko, Esp: Esparzako ezkontza-fedea, Etxp: Etxepare, Etxz: Etxauzen gutuna, Frantz: San Frantziskoren 3. ordenaren profesatze-agindua, Gar: Garibai, GurAit: Gure aita zaharra goi-nafarreraz, Henr: Gure Principe don Henrique Iaunari, IC: Ibarguen-Cachopín kronika, Irañ: Juan de Irañetaren gutuna, Last: Milia Lasturkoaren eresia, Laz: Lazarraga, Lazk: Juan Lazkanoren kantua, Leiz: Leizarraga, NafKond: Nafarroako kondestablearen gutuna, Oih: Oihenart, Olaz: Olazagutiako ezkontza-fedea, PatNos: Pater noster txikia GNz, Per: Perutxoren kantua, *RS: Refranes y Sentencias, SalmMis:* Salmo Misererea, Sand: Sandailia, Sic: Marineo Siculoren hiztegia, Sorg: Sorgin-auzietako esaldiak goi-nafarreraz, Urr: Urrexolako kantua, Urtb: Urthubiako alhabaren balada, Utrg: Utergako ezkontza-fedea, Zalb: Matxin de Zalba eta Martin de San Martinen arteko gutunak, Zalg: Zalgize, Zar: Errodrigo Zaratekoaren eresia, Zum: Zumarragaren gutuna.

10 *Aspertu banequio asper lequiquet* [Si me le yo vêgasse, vêgarse meya];
18 *Çagoquez exilic ta ençun eztayçu guextoric* [Callando estareys y mal no oyreys];
36 *Çe eyquec maurtuti hoeaneâ ederr eztanic calean* [No hagas quando fueres por el desierto lo que no fuere hermoso en la calle];
52 *Vnayoc arri citean, gastaeoc aguir citean* [Los pastores riñieron, los quesos parescieron];
*82 Tacoc deroat dodana neure echerean çejara* [Para me lleua lo que tengo de mi casa al mercado];
*166 Hurdinetan assi azquero prestu esta seyzaroa, ynoc çe bez aurqui guero çe aldia eldu doa* [Después de comêçado a encanecer no es de prouecho el niñear, nayde diga luego después que el tiempo suele llegar];
*167 Erioac ereçan Butroeco alabea Plencian* [El tártago mató a la hija de Butrón en Plencia];
*227 Yl eyquec ta yl aye, ta yre erallea yl daye* [Matar le has y matar te han, y a tu matador matarán];
*233 Yquedac ta diqueada [*Darásme y darte he];
*246 Oguiagaz hura, oragaz heroen elicatura* [Pan con agua, mantenimiento de loco y mastín];
*268 Mayaçean berarra luce da eta sendo, eguitayaren orçac ebagui leydi ondo* [En mayo la hierba larga es y crecida, las mellas de la oz podríanla bien cortar];
*275 Aroz dinean cirola osqui guichi ur[r]atu doa* [Quâdo el çapatero se haze carpintero, pocos çapatos se desgarran];
*294 Iaygui cidi naguia, erra cizan vria* [Leuantóse el perezoso y quemó la villa];
*332 Adiunça onean nentorre vaya ezer ez necarre* [En buena sazón vine, mas no truxe nada].

Bertan agertzen denaz geroz, euskarak (ipar-mendebaleko Bk; ik. § 2.3.2) hainbat aldaketa pairatu du: fonetikan 3 *yguy* eta 52 *gastaeoc* bezalakoetan bokal eta diptongo sudurkariak ziren; aldiz, 18 *ençun*, 268 *orçac* eta 332 *adiunça* ozen + frikari taldeak.

Morfologian izan dira aldaketa ugarienak: 82 *-rean* ablatibo zaharra *-tik*ek ordezkatu du eta galdu egin da horren eta prosekutiboaren (36 *maurtuti*) arteko bereizkuntza. Aditzean areago: aoristoa (52 *arri citean, aguir citean;* 167 *ereçan;*[2] 294 *Iaygui cidi, erra*

---

Ondokoak dialektoen ohiko laburdurak dira: A: arabera, Aez: aezkera, B: bizkaiera, Err: erronkariera, G: gipuzkera, HGN: hegoaldeko goinafarrera, IGN: iparraldeko goinafarrera, EkBN: ekialdeko baxenafarrera, L: lapurtera, MBN: mendebaleko baxenafarrera, Z: zuberera, Zar: zaraitzuera; (ik. 2. kap., § 5).

2. Nahiz B. Kapanagak 1983ko *Euskera* aldizkarian argitaratu artikulu xelebre batean («Testu baten bitxitasunak») bestelako proposamenak egin; bistakoa da egilea ez zela *lectio difficilior*en eta, oro har, filologiaren aldeko.

*cizan; 332 nentorre, necarre*), futuroa *egin*ekin (18 *ençun eztayçu*; 227 *yl aye, yl daye*), futuro-ahalera *-di*rekin (268 *ebagui leydi*), futuroa *-ke*-rekin (233 *diqueada*),[3] futuro inperatiboa (18 *çagoquez*; 36 *çe eyquec*; 227 *yl eyquec*; 233 *Yquedac*); ez da *-a-/-e-* bokalez 2/3 aktanteko bereizkuntzarik aditzean (82 *Tacoc deroat*), galdu da *z-* lehenaldiko 3.p.-ean (52 *citean* (2); *ezan* irrealetako aguntzailea 166 *çe bez aurqui*; 294 *Iaygui cidi, erra cizan*), *-z-* pluralean orokortu da aditz horretan ere (52 *citean* (2))…

Sintaxian aipatzekoak dira geroztik ere ekialderago baino hobeki iraun duen pluraleko mugatu hurbila (3 *Aberassoc, gajooc, auçooc;* 52 *Vnayoc, gastaeoc*), egun bitxi liratekeen ISak mugagabean (36 *ederr eztanic;* 268 *berarra luce da eta sendo;* 275 *Aroz dinean*), aspaldi galdutako **ezan* laguntzailea (166 *çe bez aurqui,* 167 *ereçan* [< **ero* + *(z)ezan*], 294 *erra cizan*), gehiago iraun zuen *joan/eroan* + Partizipioa ohiturazkoak (166 *aldia eldu doa*; 275 *guichi ur[r]atu doa*), -ø (eta *-i/-tu*) irrealetan (10 *Aspertu banequio asper lequiquet;* 52 *arri citean, aguir citean*), *ze-* ezeztapenak irrealetan (36 *Çe eyquec*), soziatiboko koordinazio arkaikoa (246 *Oguiagaz hura, oragaz heroen elicatura* (ik. § 3.5.4), hitzordena (18 *ençun eztayçu;* 268 *berarra luce da eta sendo*) eta Aresti-Linschmann legea (82 *deroat dodana neure echerean)* izenordain posesiboen distribuzioan (ik. § 3.5).

Lexikoan galdu dira 3 *yguy,* 36 *maurtuti,* 52 *unayoc*, 82 *Tacoc, çejara*, 167 **eran*, 227 *erallea*, 246 *oragaz, heroen, elicatura*, 277 *cirola, osqui, urratu*, 246 *elicatura*, 332 *Adiunça* eta beste hainbat aditzen forma sintetikoak (233 *Yquedac ta diqueada*, 36 *eyquec*); 3 *nequ*ek, 10 *aspertu*k eta 52 *arritu*k orduko esanahia, etab. (cf. § 3.6 eta Lakarra 1986, 1996 lehenago).

Aztertutako corpusa zabaldu-ahala are aldaketa eta kasu mota gehiago eridengo genuke, noski eta, batez ere, gure analisiaren zehaztasun eta sakontasuna areagotu ahala.

***1.0.2.*** Hizkuntzaren historia aztertu gogo duen ikertzaileak, —testuez eta teoria linguistikoaz lortutako ezagutza landa—, bi eratako baldintzak kontuan beharko ditu, nahi eta nahiez biek izango baitute eraginik bere ondorioetan: corpusaren aberastasuna (antzinatasuna eta ñabartasuna, nahiz dialekto, nahiz hizkuntz maila, nahiz genero moeten aldetik) eta corpus horren ezagutza. Bigarren honetarako lan filologiko zehatza ezinbesteko da, teoria linguistikorik hoberenarekin batean Meilletek (1925) eta Mitxelenak (1963, adib.) usu aldarrikatu bezala.

Usu ez ditugu biak batera ikusten euskalari eta diakronisten artean:

---

3. 233 *diqueada*-n, itxuraz, ezohiko alomorfo arkaiko bat genuke (*-V* > *ø* eta **-d* > *-t,* gabekoa, cf. *duda-* > *dut*); alabaina, futuro/subjuntiboko formak dira *-n* > *-ø*-ren erorketa berantiarrarekin (cf. *axa* < *haizan*); gertakari honek azaltzen du *-V* > *ø* eta **-d* > *-t*, orokor eta aski zaharragoek hor eraginik ez izatea.

The negative *ez* 'not, no' is invariable except in B, in which a variant *ze* is found in early texts when followed by a subjunctive or a imperative: *ce biarco echi* 'don't wait for tomorrow' in *RS* 1596. This *ze* survives today in at least one part of Bizkaia. Very speculatively, I might propose an ancient conditioned alternation **eza ~ *eze*, with differing vowel loss. Again, it is not out of the question that we might be looking at ancient verb-forms here (Trask 1997: 209).

A complication is the existence in early northern Basque, and above all in the writer Leizarraga, of an indicative form constructed with the radical [*sartu zen sartu zuen / sar zedin / sar zezan*] (…). Rare outside of Leizarraga, and unknown since his time, *the second set of forms is decidely unusual, and may represent no more than an idiosyncratic development peculiar to a particular time and place* (Trask 1997: 237-238).

Alabaina (1. pasarteari dagokionez),

*a.* *RS*en benetan dena 530 *ez biarco echi* da, ez Traskek emana dotrinaren eta adibidearen artean bistako kontraesana eginaz;
*b.* *ze* ez da *RS* ez inon indikatiboen edo aditz jokatugabeen aurrean, ezta aditzik gabeko sintagmetan;
*c.* *ze* ez soilik Bn, baizik eta An ere (Lazarraga) lekukotua dago, distribuzio berarekin;[4]
*d.* **eze* etimologiaz eta formen sorrera eta bilakabideaz *FHV*n bazen eta bada zer ikasirik.

Hurrengo ahapaldiko aoristoari buruzkoa ere harrigarria da (ik. § 3.4.3.1), Euskal Herri osoko lekukotasunik arkaikoenetan ageri baita, 1398ko Labieruko zaldunaren hilarriko *nor izan zan zuri lotsa egorrochi eguiçuna*tik hasita.[5] Euskara Batu Zaharrekotzat gutxienez (ik 2. kap., § 5) jo litekeen egitura dugu, bai erabilera perifrastiko zein sintetikoan (azken hauetan *RS* Leizarraga baino aberatsago izan arren).

---

4. Zenbaitek aipatu Gar-en *cetoa* ezinezkoa da fonetikoki zein morfologikoki; izan ere eskuizkribuan *eçtoa* da benetan irakurtzen dena.

5. Bidenabar, *TAV*eko Orazio Debotoan, bi aoristo dira Mitxelenak ikusi bezala (eta «X Yrekin» koord.soziatibo bat) eta nekez izan liteke Argaignaratzek *sortua*; gehienez ere egile horrek bere garairako tradizionalizatua zen otoitza jaso bide zuen. Bidebatez, *ConTAV*en (§ 5.1.2) berrargitaratzen den «Otoitz debotoak» merezi luke ikerketa astitsuagorik zeren Sarasolak aipatzen dituen *beha cioçon* eta *hartceçan* —erants bekie *Adam mainadarequin handic quenceas*— ez bide dira 1600 ondokoak, baina ez dugu aurkitu horien eredukorik otoitzaren testu osoa zein liburuxka osoa ikuskatu ondoren ere. Baliteke, bada, otoitza funtsean 1600 ondokoa izatea —baina ez XVIII. mendekoa liburuxka bezala— baina lehenagoko zanbait osagai barneraturik.

Zorigaitzez, Trask ez da estandar behinenak bete ez dituen bakarra[6] eta (horrelakoak zerrendatzeko ahalegin berezirik egin ez arren) ondoko orrialdeetan ikusi ahalko da adibide bat baino gehiago. Gutxieneko jardun filologikoak ere, ordea, asko eman liezaguke, lan poxiren bat eginaz; nolanahi ere ez da euskara arkaikorik ez balitz bezala[7] edo 1400-1600etik hona (nahiz data batetik bestera) alde larririk ez balitz legez aritzerik (cf. Meillet 1925), inoiz euskalari zenbaiten jokabidearen arabera kontrakoa dirudien arren.

***1.0.3.*** Hizkuntzarekin egin konparaketa genetiko eta ahaidetasun hipotesi ugarietarik euskararen egitura eta historiaren ezagutzak ez du emendio ez laguntzarik izan, IE, semitiko, uraliko, erromaniko nahiz germanikoa bezalako familia linguistiko garatu ororen analisian aurkitzen dugunaren aurka (ik. 2. kap., § 2). Egiteko horretan murgilduek, —salbuespen gutxirekin (Lafon, ia bakarra)— helburu guztiz desbideratuak izan dituzte, interesik gabekoak benetako lekukotasunetan islatu hizkuntzaren bilakabidea aztertzeko. Euskararen historiografian hurbilketa antzu honek oraintsu arte izan duen erabateko nagusigoa dela eta (oraindik ere ez da guztiz atzendu) alorra ez da behar adina garatu, nahiz Mitxelenaren obrari lotu barne-berreraiketak horren oinarriak jarri eta filologiaren beharra —teorian (cf. Mitxelena 1963, 1964a) eta praktikan (cf. Mitxelena 1954a-b-c, 1958, 1970a, etab.)— aldarrikatu 1950. hamarkadaz geroz.[8]

Edozein garaik bere iraganaz informazioa gordetzen du (cf. Mitxelena 1963),[9] eta hainbat aberatsagoa informazio hori zenbat eta arkaikoago izan; gogoeta honek eragin digu kapitulu honen antolamenduan: izan ere, honako honetan beste inon baino

6. Gorrotxategi & Lakarra (2001) Trask (1997)ko Elorrioko toponimiazko zerrendari buruz; pena da testu eta lekukotasun zaharrak zuzenean ezagutu balitu bere zenbait analisi are sendoago bilaka baitzitekeen, partizipioetako *-i*-ren orokortasunarekikoak (1990), demagun.

7. «Text languages offer an incomplete range of data for linguistic analysis» (Herring *et al.* 2000: 3) baina «Scholar of older languages have little choice but to work with the texts available» (ibid) eta «Thus while the textual parameters approach does not in and of itself resolve the problema of limited data, *it enables the analyst to extract more value from the data that are available*» (4; etzana geurea).

8. Mitxelenaren jardun filologikoaz ik. Lakarra (1987); *TAV* (eta *ConTAV*) berritzeko egitasmoaz ik. Bilbao (2013). Urkixoren lan erraldoia eta beste zenbait apalago badira aurretik baina bistakoa da horietarik Mitxelenaren lanetara den aldea.

9. Lan hau ezinbestekoa da euskararen historian, ez soilik aitzineuskararen eta historiaurrearen berreraiketan baina baita protohistoriari eta ondoko garaien ikerketarako bideei dagokienez; ez da zeresanik puntu askotan gauza bera gertatzen dela horren biki den *Sobre el pasado de la lengua vasca*-rekin (ik. Gorrotxategi 2013 eta Gómez 2011b, hurrenez hurren).

premiazkoago iruditu zaigu corpusaren ezagutza ahalik eta sakonena eskeintzea, bai bere laburtasun eta —hein batean— desegokitasuna gogoan eta baita bertatik euskararen bilakabideaz erdiets daitekeen argi nabarmen parekaezinagatik.

Hara adibide zenbait: *joan/eroan (eraman)* + Partizipio egiturak ohikotasuna adierazten zuen (ik. goian *RS* 166, 275) euskara arkaikoan ez ezik ondoko euskara zaharrean ere. Egia esan, 1600etik aurrera horren arrasto bakarra Bn dugu eta Euskara Arkaikoan (EArk aurrerantzean) L (Leizarraga), BN (Etxepare) eta (ugariago) Zn (Oih *Prov*) ez bagenu, norbaitek pentsa zezakeen Bren berrikuntza dugula.[10] *-a-/-e-* 2./3. perts. markatzen dituen erro aurreko alternantziarekin antzera (cf. goiko *RS* 18 *eztayçu, RS* 82 *deroat*): Bn 1800 arte edo dirau, baina oso ilun eta exkax da gainerakoetan baina hor dira Oih *Prov*eko hainbat gehi Mitxelenak (1954b) markatu GZeko besteren bat[11], Az aparte.

Era honetako jardun filologikoak ez du laguntzen, noski, *RS* 281en Azkuek *atorra* «zuzentzea» originaleko genitiboa (*atorren baxen urrago narrua* «El cuero más cerca que la camisa»), huts garbia bailitzan; alabaina, nahiz euskara moderno edo garaikidean horrelako zerbait euskaldun gehienentzat ezezagun edo are agramatikala izan, EArko hapax horrek kide aski du non eta, Mendigatxa Azkueren laguntzaile erronkariarraren gutunetan (*iñaute eguna izan da goressima egun baten bikain triste*) eta baita lehenago Hualde Mayorengan (Mat 11,11 *aren beino andiago izanic*), etab. Mitxelenak (1964c) gogoratu *are* (*are gehiago, areago, are gutxiago*) orokorraz landa ere.

Filologiak ezinbesteko du teoria linguistikoa ekarpen esanguratsurik egingo badu. EArkean berriro ere inon baino gehiago. Lafonek ikusi zuen zuhurki Oih 44 *Asiti bihia* esaldiko *-ti* euskaldunek azken mendeetan ablatibo gisa ulertzen dutena, Oihenartek «le grain bien tel qu'estoit la semence» ulertzen zuela eta, azken batean *-ti* Adj-eratzailea eta *-ti* (Prosek.)-Ablatibokoa bat zirela (1999 [1948]: 199hh). Zergatik ordea? (Aspaldiko) euskararen eta euskaldunen ezaugarri bitxia ote? Ba ote honelakorik beste inon? Eta zergatik kategoria baten eta bestearen arteko lotura? Begiratzen badugu Heine eta Kutevaren *The lexicon of grammaticalisation* (2002) ikusten dugu TO COME aditzak (eusk. *jin* < **e-din*) bi garapen eta balio horiexek dituela zenbait hizkuntzatan munduan barrena, bide batez (cf. **di* > *-di* / *-ti*) «Trasken Legea»-rentzat —hots, «hizki batean herskari ahoskabe / ahostun / zero txandakatze batean alomorfo ahostuna dugu zaharrena» (cf. 2. kap., § 4.4.3.2)— froga gehiago bilduaz. Are gehiago: erro horretarik

10. Horrela egin zuen Rebuschik futuroko inperatiboarekin bere tesian (1984), nahiz kontrakoa esplizitatua izan Mitxelena (1964a)n.

11. Hemen gauzak ilunago dira; gogora Mitxelenak ezagutzen ez bide zituen *Miserere* zaharreko *dazan, dazagun*, etab.

ateratzen da zenbait hizkuntzatan «urruneko futuro edo potentziala» ere, hots, euskara zaharreko *-kidi, -idi* (cf. goiko *RS* 268 *leydi*) «erro» zahar bezain irregularretako azken zatia:

> COME TO > (3) FUTURE Bambara *nà* 'come', remote future marker. (...) Swedish *komma* 'come' > *komma att*, auxiliary expressing unplanned future (Werner 1986: 102-3). Tamil *vaa* 'come', verb of motion > auxiliary marking intended future actions (...) Chinese *lái* 'come' > marker of intended future actions and of purpose clauses. (Ik. Lakarra 2013b)
>
> Azkenik, euskarazko *-di* animali izenek (*idi, ardi, zaldi, ahardi*) aditz honekin berarekin egindako kideak dituzte Afrika ekialdeko zenbait hizkuntzatan (Dimmendaal 2011) eta Lakarra (2013b) euskal datuen azterketa zabalagorako.

Mitxelenak Bko pare bat dotrinako gehi Arrasateko Erreketako «Xekin Y = X eta Y» egitura bitxitzat jo izanak eraman gintuen horren atzetik indusketa EArk eta Zaharrean. Egitura bitxia zen, noski, eta artean (eta gero) ez du gramatikalarien arreta handirik jaso. Alabaina, *RS*, *Misererea*, Marijesiak, Larramendiren hiztegia eta B-G-GNko zenbait lekukotasunetan —tartean hainbat tradizioko kantu— aurkitu genuen (Lakarra 1983). Beranduago, Lazarragarekin lanean jardutean egitura honen beste aldaera bat («X Yrekin» = «X eta Y») testu horretan eta hainbatetan horrezaz landa, hegoalde eta iparraldeko lekukotasunetan agertzen dela (Lakarra 2008b). Izatez, egitura honen azterketak anekdota filologikotik gorako garrantzia du: batetik balada zahar baten egiazkotasuna —gertakariak XVII. mendearen erdialdekoak dira eta jasotako bertsio bakarra ia bi mende geroagokoa; ik. Cid (2008)— frogatzen lagundu du Vinsonen hipereszeptizismoaren aurka (ik. § 2.1 akabuan); bestalde, mundu mailan egitura horrek dituen paraleloak aztertuaz Stassenek (2000) «*with*-language» deitu hizkuntzez ondorioztatuak eramaten gaitu euskararen historiaurrerako historian zehar ezagutzen dugunaz oso bestelako tipologia iragartzera (ik 2. kap., § 4.4.6.8).

Ezin uka, bada, teoria linguistiko eguneratuenaz landa, lekukotasunen (eta bereziki lekukotasun zaharrenen) azterketa eta ezagutza ezinbesteko direla hizkuntzaren historia sakona erdiesteko.

### 1.1. Zergatik 1400-1600

Euskararen corpusa txikia, asimetrikoa eta homogeneoa dugu XX. mendera iritsi bitartean: hasteko, lekukotasun urriak (hainbat idazle frantziar eta espainiarrek, zeinek bere aldetik badu hainbeste eta are gehiago); bestalde, berandu arte hizkera anitzek ia ez du lekukorik: Gk, esaterako, 1713ko Otxoa Arinen dotrina bitartean eta erronkarierak

edo zaraitzuerak Bonapartek agindu itzulpenak heldu aitzin.[12] Bk 250-300 urte lehenagokoak ditu, aldiz (ik. beherago), eta BN ekialdekoak 170koak; hori bai, 1545az geroz azken euskalki honetako hurrengo testu handia 250 urte berandutu zen (Lopezen dotrina arazo dialektalez eta bestelakoz betea: ik. Camino 2013ren edizio bikaina).[13]

EArkaren garai honetako corpusa oso homogeneoa da islatu gaiei dagokienez, elizakoak alegia, inguruko hizkuntzetan baino are ugariago; halere, nahiz gai profanoak % 5etik behera izan, ez da hurrengo mendeetakoa baino apalago, bere txikian ahozko tradiziotik jasotako errefrauek edo balada eta eresiek berebiziko interesa ematen baitio hainbat lekukotasuni.[14]

Periodizazioa edozein hizkuntz historiaren egiteko nagusien artean kokatzen da. Euskalaritzan, gainerako ikerketa-tradizio askotan bezala hizkuntzaren egitura eta bilakabideaz kanpoko datu eta gertakarietan oinarritu izan da oraintsu arte egiteko hori, gizartearen historian, literaturarenean edo bestelakoetan. Hizkuntzaren barne-irizpideak jarraikiz, Lakarra (1997a)n aurkeztu periodizazioan —akitaniera eta erdiaroko euskararen garai protohistorikoaren ondotik— 1600 arteko hedadura eman zitzaion EArki. Usuenik Etxeparerekin hasi ohi zelarik euskararen historia bere adiera hertsian, mende erdiko tamaina ateratzen zen lehen garai honentzat, laburra oso historia laburreko hizkuntzentzat ere.[15]

---

12. Salbuespen garrantzitsu genituzke Misererea eta 1614ko Azkoitiko Erregela; Isastiren lekukotasunaz ik. § 2.3.3.

    Orain 1616-17ko Erronkari (6) eta Zuberoa (9) arteko 15 gutun ditugu (Monumenta Linguae Vasconumeko kideak ari dira horien edizioa prestatzen), ia mende bat aurreratuaz Zren prosa; baina, zalantzarik gabe, Err-ren kasuan da corpus gehiketa eraginkorrago hizkera horren azterketarako, 250 bat urteko aitzinamenduak XIX. mende akabuko eta XX.aren hasierako lanabesetarik abiatu irudirik ohikoena ia erabat aldatzeko beharra sortuaz (cf. Lakarra 2014, 2016d).

13. Arabako euskarari dagokionean izan dira aldaketa nagusiak ikerketan (cf. Schmidt 1992 IErenean lekukotasun berriek eragindako azterketa-jauziez): lehenik Landucciren hiztegiak (cf. Mitxelena 1958, *FHV* eta Urgellen lanak § 4.4.ean) eta 2004az gero Laz-ren eskuizkribuak dakartzanak. Lehen Btzat jotako zenbait lekukotasun Atzat jo ditzakegu; azkenik, ba ote arrazoirik Gar «Gko Btzat» sailkatzen jarraitzeko? (Are gutxiago, noski, «lit. Gtzat» norbaitek egin bezala); ik. § 5.

14. Aztertutako garaian lituanierak, suomierak, errumanierak eta beste (egungo) zenbait estatu-hizkuntzak ez du gehiago edo zaharragorik; aitzitik, hein batean, haietako gehienek baino genero eta hizkera ezberdinetako lekukotasun haboro duelarik ikerketarako informazio aberatsagoa eskeintzen du hizkuntz historialariarentzat.

15. Bereizkuntza nagusia erdiaroko lekukotasunekiko 2. gradukoak (onomastikoak) / zuzenak dugu; euskara zahar eta klasikotik ezaugarri larriek aldentzen dute, aditz-sistemako aldaketek bereziki, eta baita bokal sudurkarien iraupenak edota mendebaleko txistukari-neutralizazioek ere (ik. orain § 3).

Ondoko ikerketek ez dute gaitzetsi 1600eko muga; beharbada, 20-30 urte geroago hobe litzateke literatur hizkuntzaren aldetik baina ez hizkuntzaren historiarenetik: zergatik Materra (ik. Krajewska *et al.* 2017) edo Beriain (cf. Reguero 2017) Leizarragarengandik hurbilago Axular (ik. Urgell 2015) eta Ziburuko Etxeberrirengandik baino? Argitalpen data ez baina hizkuntza-egoerarena hartu dugularik oinarri, Isasti, Bela, Zalgize eta are Oihenarten errefrauak gure corpusean sartu ditugu xvii. mendean argitaratuak edo osatuak izan arren.

1400eko hasiera datak iruzkin zabalagoa merezi du, aipatu 1545ekora ohituak izanik. Azken data hau ere hitzarmenekoa, komenentzikoa da, jakina, holakoetan ohi bezala: data hori baino lehenagoko dira, esaterako, 1531n Frai Juan Zumarragakoak Mexikotik arrebari bidali gutuna edo beste zenbait lekukotasun txiki, baina horiek ez dirudite aski aldatu beharrik izateko. Alabaina, arazo larriagoa dugu ahozko tradiziotik bildutakoena: izan ere, biak 1596an argitaratu ziren arren, Betolatzaren *Dotrina* eta *RS* bilduma erkatzean ondokoa dakusagu forma irreal perifrastikoez: 7tik 7 partizipioarekin lehenak, *egin* zein **edin*ekin, eta 40tik 26 lege zaharrekoak (*neca adi, arri citean, uza bez, ce bez aurqui…*) *RS*ek, 14 usadio berrikoen aurka. Datuok ez dira 1596ko hizkera baten isla, 1545 eta are 1500 baino lehenagokoren batenak baizik (cf. Lakarra 1996b eta hemen § 2.3.2, § 3).[16]

Ezaugarri bera oinarri hartuaz xv. mendeko gertakariei lotu eta ahoz-aho gorde ondoren hurrengo mendearen amaieran idatziz jarritako kantu zaharrak erkatzean —Milia Lastur eta Abendañoren eresiak, Olaso, Arrasateko erreketa, Errodrigo Zarateko eta Sandailiaren kantuak—, *ezcon bequio, al banegui empara, gal didila Unçueta, sumi a[ça]la, jauna ezcençan empara, sar gayteza[n], justa gaitean, sar naxaitec, nay ez daquiola valia* aurkitzen ditugu. Hots, 9tarik 9ek (% 100ek) gorde dute egitura zaharra, berriaren alerik gabe; are gehiago, Arrasateko Erreketan diren **ezan*en formak eta *egin*enak *RS*ekoekin eta *Miserere* Gkin erkatuaz, haren distribuzioa nabarmen zaharrago dugu: 3 *erre açala*, 4 *sumi a[ça]la,* 5 *ezcençan empara,* 25 *erre deçagun Mondragoe* eta «*ezin* __» egituran adibide bakarra *egin*-entzat; hor dira orobat, bere laburrean, bi subjuntibo zahar (2 *dabela*, 37 *eudela*), aoristoa (46 *jarruta*), TOGen eta Xekin Y egituren adibide bana (cf. § 3.5.5), eta gorago aipatu aditzoina + **edin/*ezan*-en adibideez gainera: 1 *[g]al didila* eta 26 *sar gaytezan*. Horrenbestez, lekukotasun labur eta arazotsuek izan ditzaketen arriskuak gogoan izanik ere, hauen hizkera *RS*rena baino zaharrago dugula

16. *RS*eko *-tu* gehienak *egin* aurrean dira (cf. Mounole 2007); behin —goiko *RS* 10 *aspertu banequio asper lequiquet*— esaldi berean eta aditz nagusi eta laguntzaile bera jokatuaz, *-tu*duna eta gabea. Nahiz urte berean argitaratu, *RS*ek Betolatzaren dotrinak baino hainbat ezaugarri arkaiko gehiago du, lexikoan, izen eta aditz-morfologian nahiz sintaxian (ik. § 2.3.2 eta § 2.5.2.

ondorioztatu behar, alderdi garrantzitsu askotan hurbil beren sorrerako gertakarietarik, XV. mendearen 1. nahiz 2. zatian; hortik, EArkaren hasiera 1545etik mende oso bat baino gehiago aldatu beharra, 1400 aldera edo.

### 1.2. Hizkuntzak Europan

Bohemia-Moraviako salbuespenarekin edo, ia 1500 arte Europa Mendebal osoan latina da ezagutza eta erlijioaren hizkuntza eta horren egitura, forma eta erabilera hertsiki arautua dugu aspaldidanik, horren irakaskuntza delarik *gramatika*, hizkuntza idatziaren artea. Inoren ama hizkuntza ez delarik, latinaren balioa honetan datza: arautua, erregularra, belaunaldi eta lurralde orotan beti berbera zen, egokia oso Jainkoaren hitz betierekoa gordetzeko, besteak beste.[17]

XV. mendearen akabuan burutu «lehen iraultza ekolinguistikoak» (Baggioni 1997) aldatuko du egoera hori: hainbat ahozko hizkuntza, —eredu eta teknologia gramatikal latindarra jarraituaz—, gramatizazioaren bidez fixatuko, deskribatuko eta arautuko dira, estandar bilakatuaz eta (zeinek bere estatu berriaren eremuan) lehen latinarentzat gorderik zen erabileraren parte bat eskuratuko. Hurrengo mendeetan, (dagoeneko XVI.ean zehar), latina lehenagoko esparru propioan ere urrituko eta baztertuko dute, hein batean eta, honenbestez, 1550-1650 bitartean erabilera formalizatuetan hizkuntza unibertsalaren eta bertako hizkuntza komunaren konbinaketa dugu, ez latin hutsa lehen legez.

Esparru horiek nazio-estatu berriei lotuak dira eta orotara hizkuntza aniztasuna eraiki arren, barnerantz begira hizkuntza komunaren aldeko elebakartasunerako joera dakarte. Errenazimenduarekin estatu hizkuntza bilakatuek historiaurre luze eta korapilatsua zuten, aurretiaz (inoiz 6/7 mende lehenago) literatur-hizkuntza gisa agertu ondoren. Garai honetan garatu Estatuen hizkuntzen prozesuek badute hainbat ezaugarri komun (Baggioni 1997: 85hh): geolinguistikaren edo hizkuntzalaritza historikoaren eremuak ez datoz bat estandarrak bere menpe hartutakoarekin. Hizkuntza komunek ez dute beti estandar-eske zen espazio dialektal jakin bat bateratzen: nederlanderak, adib., bere hedaduratik kanpo uzten du behe-alemaneraren zati handiena eta, aldiz, bere menpe hartzen beste eremu germaniko ezberdin bati zegokion dialekto frisoiena; frantsesak, aldiz, esparru ez-erromanikoena (germanikoa, zelta, euskara), *oc-* (okzitano, gaskoi, katalana) eta are *si*-erromantzeenak (korsikera) estali ditu.

Europako hizkuntzetan aho-hizkeren estandarizaziorako arau gisa baliatzeko aldaki jaso-ospetsua ez da halabeharrez hautatzen; kasu guztietan nagusi da faktore politikoa hizkuntza komuna sortu eta «nazio hizkuntza» gisa aldarrikatzeko. Hizkuntza komunak

17. Garai honetan lekukotutako gainerako hizkuntzei buruz ik. Banfi (1993: 17-8).

gutxienetan eraikitzen dira dialektologikoki ezagut daitekeen aldaki jakin baten gainean, hainbat aldaki geografiko eta gizarte-maila ezberdinetatik datozen ezaugarri fonologiko, morfologiko eta lexikoren sintesiaren gainean baizik. Hauezaz landa, gogoangarri dira hizkera idatzia bilakatzeko sortutako fenomenoak eta lehendik ziren literatur hizkuntzen eraginak.

Antzinate eta Erdiaroko hizkuntza idatzi handiak (grekera, latina, arabiera, turkiera) Inperio jakin baten jardunari zegozkion; idazkeraren garapena estatuarenari lotua izanik, oraintxe sortu estatu-nazioei dagozkie hizkuntza berriak: portugesa, espainiera, frantsesa, ingelesa, nederlandera, daniera eta suediera.[18] Erreformaren hedadurak gehienen garapenerako akuilukada sendoa dakar: sortu berri edo sortzen ari nazio-estatuak eta horien egiturak gotortzen dira kasuan kasuko subiranoak hartu kulto anglikano, luterano, zwingliano, kalbinista, metodista edo bestelakoren laguntzaz. Biblia hizkuntza literalizatu berrietara itzultzea hizkuntza komunen egonkortasun eta hedadurarentzat funtsezko gertatzen da, aipatuki lehendik corpus literario adierazgarririk ez zutenentzat. Horien hedadura dakar alfabetizazioak, usuenik ahozko hizkuntzetara egin bibliaren itzulpenaren gainean izan ere; gero kultu erreformatuari katolizismoak bere medium linguistiko honetan bertan egin beharko dio aurre.

Baina istorio hauek, funtsean, Europa Ipar-Mendebalekoak dira: Hegoaldeko Europan monarkia katolikoek erdietsi zuten Erreforma gelditzen eta Erreformak berarekin zekarren kultura eta komunikazioaren aldaketa ez da hegoaldean gertatuko; hortik, esaterako, xx. mendera arte Italian, Espainian, Portugalen eta Frantzian ere, alfabetizazioa —eta bistakoa da honek hizkuntzaren ekologian duen eragina— askozaz atzeratuago izatea Erreforma garaile atera zen lurraldeetan baino.[19] «Ce qui distingue les pays protestants du nord des pays catholiques méridionaux, c'est moins le statut de la langue commune que sa diffusion massive dans les couches populaires pour la lecture de la Bible» dio Baggionik (1997: 109). Ez zen hau faktore bakarra izan —hor dira hiritartze prozesua,[20] laizizazioa, artea eta literatura, itsas-haraindiko hedadura eta, batez

18. Ekialdeko hizkuntzena zein italiera eta alemanierarena eredu mixtoa dugu eta estatu-nazionalaren eraikuntzaren aldetik testukoetarik bereiz da.

19. Baggionik (1997: 111) Frantzian gramatikoak eta lexikografoak protestanteen artean ugariago zirela gogoratzen du, hizkuntza komunaren aldeko erreformatuen interes handiagoaren seinale; Euskal Herrian Zalgize eta, bereziki, Bela genituzke horren paraleloak. Garibairi errefrauak Kortetik eskatzen dizkiote, Isastik ere han den bitartean idazten ditu eta gainerako kasuetan ere (Poza barne) hizkuntzazkoak 2. mailako helburu edo baliabide dira; benetako lehen gramatikoa Oihenart dugu hurrengo mendean. XVI.ean ez dugu Dubois, Maigret, La Ramée eta enparaturen kiderik.

20. Honekin lotua da Villers-Cotterêts (1539)-ko Francisque Iren dekretu famatua zeinetan frantsesa

ere, inprimategiaren sorrera eta hedadura—, baina enparatuko ezerk baino gehiagok lagundu zuen Europako «lehen iraultza ekolinguistikoa».

### 1.3. Euskararen mugak eta egoera

#### *1.3.1. Euskararen mugak*

1400 eta 1600 artean euskararen mugak zein ziren zehatz esatea ez da erraza, alde batetik, haien berri ematen duten lekukotasun zuzenak urriak baitira, eta bestetik, bi data hauen artean egoera-aldaketak, hots, galerak, gertatu baitziratekeen.

Garibaik (1571) dakarren lekukotasunaren arabera, haren garaian, euskara Gipuzkoa, Araba eta Bizkaian, eta Nafarroako Erreinuko zati handi batean mintzatua zen, berezikiago, Iruñeko merindadean.[21] Lekuonak (1933) Iruñeko elizbarrutiko herrien zerrenda bat aurkitu zuen, 1587koa, bakoitzean zer mintzo zen zehazten zuena. Horren arabera, urte hartan herri hauen % 90 euskalduna zen; zehazkiago, 536tatik 453. Historialari gehienen ustez, XVIII. mendera arte, Lizarra eta Tafalla Nafarroa hegoaldean euskararen muga zedarritzen zuten hiriak dira.

Bizkaiko Batzarreko agiriek, XVII. mendean Barakaldoko ordezkariak euskaldunak zirela erakustearekin batera, Enkarterrietako sortaldean euskarak erran ohi dena baino gehiago iraun zuela frogatzen dute.

Araban, eremu zabalak besarkatzen ditu, horietarik askoren galera XVIII. mendearen 2. erdian gauzatuko baita (ik. 7. kap.): Trebiñon, euskarazko toponimia aipatu data arte desitxuratua ez izateak iradoki lezake eskualdeko herri gehienak oraino euskaldun zirela (Uribarrena & González de Viñaspre 2003); Lautadan, hainbat dokumentuk (auzi-agiriak, ezkontza-agiriak, etab.) erakusten dute herritarrak elebakarrak direla eta itzultzailearen beharra dutela administrazio eta justizia erdaldunarekiko harremanetan (Breñas & Otsoa de Alda 2002; Fernandez de Pinedo & Otsoa de Alda 2008). Gasteizen, aldaketa bidean zegoen: Navagiero (1528) bidaiari italiarrak idazten du hiriburuko biztanleek gazteleraz hitz egiten dutela, nahiz eta euskara ulertu.[22] Urte

---

ezartzen den hizkuntza idatzi bakartzat haren administrazioan; hor hizkuntzari buruzkoa artikulu bakarra da 192ren artean eta, izatez, latinari aurre egiteko, Parisko merkatarien eta horien kideen mesedetan. Soziolinguistikoki hortik behera edo kanpo izan zitezkeen hizkerak ez ziren hor inoren buruan, nahiz Frantzia osoa kontuan hartuaz, frantsesak baino askoz hiztun gehiago izan.

21. «en las prouincias de Guipuzkoa, Alaua, Bizcaya, y en gran parte del reyno de Nauarra, y en particular en todo el distrito de la merindad de Pamplona» (Garibai 1571, apud Cid 2002: 26).

22. «en Vitoria se habla castellano, pero entienden el vascuence, y en los más de los pueblos se habla esta lengua» (Navagiero 1528, apud Cid 2002: 26).

batzuk beranduago, haren herrikide Venturinok hizkuntz-erabileraren muga sozialaren berri ematen digu: haren arabera, Gasteizen, herri xeheak euskaraz egiten du, aitoren semeek, gazteleraz. Landucciren gaztelera-euskara hiztegia (1562), ziurrenik Gasteizen osatua (Mitxelena 1958), Arabako hiriburuan euskara oraino bizirik, eta bertakoekin komunikatzeko tresna beharrezkoa zela erakusten du (ik. § 4.4).

Garibaik ekarri lekukotasunari beste bi eremu gehitu behar zaizkio, Pirineoak eta egungo Ipar Euskal Herria, hain zuzen. Pirineoetako muga linguistikoak ilun dirau, nahiz eta zalantza askorik gabe erran dezakegun XV. mendean oraino Aragoiko lurretako herri batzuk euskaldunak ziratekeela —ziurrenik herri baztertuenak—. Irigaraik (1974: 115) bildu Huescako 1349ko Udal Ordenantzetan adierazten da hizkuntza batzuk, horien artean euskara, erabiltzea ez dela haizu.[23] Ipar Euskal Herriaren egoera linguistikoaren berri zuzenik ez izanagatik, euskarak gaur egun artetsu izan duen eremua estaltzen zuela erran genezake. Duda gehiago dugu Gaskoñaldearekin, ez baitakigu zuzen euskaratik gaskoierarako aldaketa noiz bururatu zen, edo noiz itzali zen osoki delako eremu zabalean.

Lehen aitzinatu bezala, aztergai dugun garaia euskararen eremu-galeren lehen garaia ere bada. XV eta XVI. mendeetan galdu zukeen Ebroren ibaialdea, eta, Arabako Errioxan, haren muga iparraldera buruz igo zatekeen: XIII. mendean, Ojacastro ibarra euskalduna zen,[24] eta seguruenik Errioxako azken gune euskalduna Euskara Arkaikoaren bezperan (eta hastapenean). Halaber, XVI. menderako, euskarak aitzina izandako Nafarroako eremu batzuk (Zankoza) hizkuntzaz aldatu ziren (Cid 2002: 26). XVII. mendean zehar, galerak emeki-emeki segitu zuen Araban.

Laburki, 1400 eta 1600 artean, euskararen erabilera intensiboko eremuak, mendebaldean, Enkarterrietako sortaldea, Trebiño, Gasteiz eta Arabako Lautada, eta ekialdean, Lizarra, Tafalla, Erronkari besarkatzen zituzkeen; Iparraldean, Eskiulatik Lapurdi kostalderaino hedatuko zen. Hortik kanpo, Sibilian edo 1492 ondoko Ameriketak alde batera utziaz, baliteke hondarrak izatea muga horietarik kanpo, ez urrutiegi, ordea. Ondoko mapak delako proposamena irudikatzen du.

---

23. «Ytem nuyl corredor nonsia usado que faga mercaderia ninguna que compre nin venda entre ningunas personas, faulando en algaravia, ni en abraych, nin en bascuenç: et qui lo fara pague por coto XXX sol.» (Irigarai 1974: 115).

24. Oroit Ojacastroko biztanleei auzietan euskaraz deklaratzeko eskubidea aitortzen zaiela (Merino Urrutia 1978: 18-9). Noski, halako eskubide bat eskaintzeko, hizkuntz-komunitate handia izan behar.

Euskararen egoera XV. mendean




## *1.3.2. Euskararen egoera*

1400 eta 1600 artean, hizkuntzak bizi izan duen egoera diglosikoaren oinarriak finkatzen dira: euskara, eguneroko bizitzako hizkuntza eta ahozko harremanetakoa izanagatik, bertako erromantzeak (gaztelera, nafar erromantzea, gaskoiera, eta gero, frantsesa), politika, administrazioa eta justiziaren hizkuntza gisa aitortzen dira, gutienez idatzizko

jardunean (ik. § 1.4). Baina garai honetakoak dira, halaber, euskara idatziaren mundura jalgiarazteko lehen ahaleginak.[25]

Garaiko politikak ez dio leku ofizialik eman euskarari. Nafarroako Erresumak, bere Foru, legeditza eta Estado propioak izan arren, ez du sekula hartu hizkuntza ofizialtzat, ezta 1530etik bortuez bestaldeko merindadera (egungo Nafarroa Beherea, *tierras de ultrapuertos* gisa izendatu ohi zena) mugatu denean ere. Haren ordez, nafar erromantzea, lehenik, eta bearnesa, beranduago, dira Erresuman idatzi politiko eta administratiboetan erabiltzen diren hizkuntzak (ik. § 1.4). Halere, gutxienez XVI. mendean, euskarak bazuen bere tokia justizian, Gaztelak bere egin zuen Nafarroa Garaiko Erresumaren Pirineoez hegoaldeko partean. Izan ere, lekukoen deklarazioen sekretua bermatzeko, itzultzaileen erabiltzea legez debekatua zen Nafarroa Garaian, eta beraz, epaitegietako ofizialek berek bildu behar zituzten lekukotasunak (jujeek berek, edo eskribau itzultzaile batek lagundurik). Halaber, erdialdeko eta iparraldeko eremuak nagusiki elebakar euskaldunak izanik, hara igorriak ziren epaitegietako eskribau biltzaileek euskaldunak izan behar zuten nafartar elebakarren deklarazioa hartzeko (Monteano 2017). Bizkaian, nahiz eta biztanleria gehienak gaztelania ez ulertu, Foruan eta gainerako idatzi administratiboetan hizkuntza hauxe da erabiltzen dena. Halere, euskarak bere lekua zuen Batzarretako ahozko jardunean, gutienez batzarkideen artean euskaldun elebakarrak onartu ziren bitartean: 1562ko aktan jasotzen da eskribauak gaztelaniaz idatzitako dokumentu bat irakurri zuela eta segidan euskarazko itzulpena eskaini erdara ez zekitenentzat.

Ondoko garaian Batzarretan parte hartzeko baldintzetatik bat izango da gaztelania jakitea (ik. 6. kap., § 1.2.1). Hala Gipuzkoan nola Araban, Ermandadearen idatziak (besteak beste, 1375 eta 1415eko ordenantzak, 1463ko Koaderno Berria Gipuzkoan; 1463ko Kuadernoa Araban) gazteleraz erredaktatuak dira. Gainera, gorago Larreak azaldu bezala (Sarrera § 3), 1571an Gipuzkoako batzarkidea izateko 50.000 marabediko ondasunaren jabe izan behar zen, eta gaztelaniaz idazten jakin. Bestela erranik, idatziak ekarri egoera diglosikoaz gain, muga sozialak ere bere agertzen dira garaiko paisaia linguistikoan: nobleak, dirudunak, poderedunak eta ikasiak, euskara oraino jakin arren, gaztelania ere menperatzen dutenak vs jende xeheak, ikasigabeak, euskaldun elebakarrak. Azkenik, Lapurdiko (1513) eta Zuberoako Usadioak (1520) gaskoieraz eta bearnesez idatzi ziren, hurrenez hurren.

XVI. mendean irakaskuntza-sarea garatzen ari da Hego Euskal Herrian. Lehen mailako eskolak ugari dira Nafarroan, Iruñean eta Iruñetik kanpo ere (Muruzabal, Burlata, Obanos, Beraskoain, Artaxoa). Hauez gain, Oñatin, Iratxen eta Iruñean unibertsitateak

25. Bai atal honetarako, bai ondokoetarako interesgarria da gurea inprimategian zen bitartean atera den Peio Monteanoren *El iceberg navarro. Euskera y castellano en la Navarra del siglo XVI*.

ziren. Denetan, gaztelania eta latina dira irakas hizkuntzak. Iparraldean, 1598an ireki zuten Baionako kolegioa, latinez irakasten zuena.

Instituzioen aldetik euskararen aldeko erabakirik hartzen ez den bitartean, Elizak batetik, eta mugimendu humanistek, bestetik, lehen aldiz daramate idatzira. Erreforma protestanteak, Europa osoan bezala (ik. § 1.2), Euskal Herrian ere izan zuen ondoriorik idatziaren garapenean: kalbinismora bihurtu ondoan, Nafarroako Erregina Joana Albretakoak Kalbinoren Testamendu Berria euskarara itzultzeko agindua eman zion Joanes Leizarraga beskoiztarrari. Halaber, Trentoko Kontzilioaren ondotik, Eliza katolikoak dotrinaren oinarriak eta predikuak tokian tokiko hizkuntzetan emateko bidea irekitzen du. Hain zuzen, Kalagurriko sinodalen[26] 1602ko konstituzioetan, Pedro Manso, Kalagurriko eta Kalzadako apezpikuak agintzen du urtero kateximak euskaraz inprimatzea, tokian tokiko aldaera dialektala kontuan harturik (ik. 6. kap., § 1.2.1). Testuan agertzen den xehetasunak aditzera ematen duenez, Mansoren agindua 1600 baino lehenagokoa zen: «que Nos assi lo hemos començado a hazer en nuestro tiempo» (apud Urquijo 1923: 336).

Aztergai dugun garaian, Betolatzaren dotrina (1596) dugu gureganaino heldu den agindu horren fruitu bakarra; oroit, hasieran manuaren berri ematen dela «doctrina christiana en Romance y Bascuenze, hecha por mandado de D. Pedro Manso, Obispo de Calahorra y de la Calzada…». 1600etik aitzina gehiago daude: Kapanaga (1656), beharbada *Viva Jesus* ere (ik. 6. kap., § 1.2.1). Manso apezpikuak predikazioa euskaraz egiteko agindua ere eman zuen: «Ordenamos y mandamos que en tales lugares [euskaldun elebakarretan], los Sermones se hagan en Vasquenze, y los Curas no consientan otra cosa, so pena que seran castigados, y lo mismo guarde los dichos Curas quando declararen el Euangelio» (apud Urquijo 1923: 339). Badakigu, halaber, Arrasateko San Frantzisko komentuan (1579) lehentasuna fraile euskaldunei ematen zitzaiela (Intxausti 1990: 83). Baliteke gureganaino heldu ez den Sancho de Elso nafarraren dotrina elebiduna (1561) Iruñeko apezpikutzaren aginduz osatu izana. Dirudienez, aztergai dugun garaian Baionako apezpikutzak ez zuen neurri berezirik hartu euskararen alde fidelengana errazago heltzeko —bai, aldiz, ondoko garaian Olce apezpiku euskaldunaren eskutik, ik. 6. kap. § 1.2.1—.

Europan zabaltzen ari den uhin humanistak ere (§ 1.2) euskararen egoera aldatzen du. Garai honetakoak dira euskararen lehen laudatzeak edo apologiak (§ 4), baina baita

26. xvii. m.an Bizkaiko jaurerria, Arabako probintzia osoa, Gipuzkoako probintziaren zati bat, eta Vianako eskualdea Kalagurriko Elizbarrutian zeuden. Nafarroa Garaiko eta Gipuzkoaren gainerako herriak, Iruñeko elizbarrutian; Baztan, Lerin, Bortziriak eta Oiartzun eta Bidasoa ibaien arroak (Oiartzun, Errenteria, Lezo, Pasaia, Hondarribia eta Irun) aldiz, Baionako elizbarrutian.

ahozko tradizioaren lehenbiziko bilketa-lanak ere (§ 2.1). Euskara idatzira eraman duten lehen obrek, Etxepareren *Linguae Vasconum Primitiae* (1545) eta Leizarragaren *Testamendu berria, ABC* eta *Kalendarioa* (1571), Frantziako humanista-talde baten sustengua dute (Arkotxa & Lakarra 2015).

### 1.4. Euskal Herriko beste hizkuntzak

1400-1600 artean euskara Euskal Herriko hizkuntza nagusia izanagatik, ez da bakarra, lekuaren arabera, haren ondoan nafar erromantzea, okzitaniera, gaskoiera, gaztelania eta frantsesa ere erabiltzen direlako. Hein apalago batean bada ere, latinak oraindik garrantzia du aztergai dugun garaian. Beherago, aipatu hizkuntza bakoitzaren egoeraz eta erabilera-eremuez bi hitz erranen ditugu.

#### *1.4.1. Latina*

Garai honetan, hizkuntza komunen garapenarekin, latinak ordu arte zuen kultur-, erlijio-, administrazio-hizkuntza estatusa galtzen du. Adibidez, XVI. mendean zehar, Frantziako erresuman, besteak beste erlijiozko (Lefèbre D'Etaples, Calvin), filosofiazko (Ramus), medikuntzako (Charles d'Estienne, Abraham de la Framboisière) obrak frantsesez agertzen dira lehen aldikoz. Orobat, Espainiako erreinuan gaztelaniak XVIan idatziaren esparrua bere egiten du. Haatik, mende horretan, latina oraino irakaskuntzako hizkuntza da bai Frantzian, bai Espainian. Bestela erran, garai honetan, euskaldunek harreman gutxi dute latinarekin; izatekotan, euskaldun letratuek dute haren ezagutzarik —batzuk beste batzuk baino hobea—. Hortaz, mailegaketa gertatzekotan, erlijio-eginkizunetarako hiztegiarena dugu. Testu erlijiozkoetan ere interferentzia asko dagoke eredu latindarra erabili denean. Dena dela, oraindik asko egiteko dago gai honen inguruan (Echenique 1997).

#### *1.4.2. Nafar erromantzea*

Hainbat lanek (Cierbide 1970, González Ollé 1970a-b, Mitxelena 1971c, Saralegui 1977) erakutsi dute Erdi Aroko Nafarroan, frankoen okzitanieraz gain (ik. § 1.4.3), beste hizkuntza erromantze bat bazela, bertakoa eta beste hizkuntza erromantzeetatik desberdina —baita geografikoki hurbil dagoen aragoieratik ere—; hortik, «nafar erromantzea» deitura.

Nafarroako gune erromanizatuenean eta gorte-giroan agertu zen, erreinuaren hizkuntza ofiziala bilakatuaz. Legeak, notario-dokumentuak, erregearen adierazpenak, ebazpenak hizkuntza horretan osatzen ziren, baina literaturak ez zion doi-doia lekurik

egin (González Ollé 1970a). Gerora, gortetik maila apalagoko jendeengana heldu eta emeki-emeki euskararen lekua hartzen hasi zen. Baina delako ordezkatzea osoki bururatu aitzin, gaztelerak ordezkatu zuen. González Olléren arabera (1970a), nafar erromantzeak XV. mendearen bukaeran bota zuen azken hatsa. Euskara Arkaikoaren hastapeneko paisaia linguistikoan zegokeen, ziurrenik biziki ahuldua.

### *1.4.3. Okzitaniera eta gaskoiera*

Hauek erabiltzen dira euskararen eremu zaharrean, zehatzago, lehena Nafarroa Garaian eta bigarrena Gipuzkoan eta Iparraldean.[27]

XI. mende bukaeran, Nafarroako erresumak komertzioari eta artisautzari irekitzea erabaki zuen eta, horretarako, foru berriak ere erredaktatu jarduera berri hauei dedikatuko zirenei ordu arte bakarrik jauntxoei mugatu eskubide eta askatasunak eskaintzeko. Horren ondorioz, XI-XIIetan zehar, Pirinioez bestaldeko jendeak —bereiziki, Rouergue, Quercy, Languedoc, Bearnoa eta Provenza eskualdeetakoak— Jakaz gain, Lizarra, Rocaforte, Iruñea, Gares eta Zangozan kokatu ziren. Franko horiek auzo itxietan bizi ziren, beste nafarrei (nobleak, elizgizonak, bilauak…) debekatuak zitzaizkien burgoetan. Komunitatean bizitzeak bi ondorio izan zituen: batetik, jatorri okzitandar desberdinetako hiztunen arteko kontaktuaren eraginez, okzitanieraren aldaera batu eta estandarizatu bat sortzea (ahoz eta idatziz erabilia),[28] bestetik, belaunaldiz belaunaldi[29] frankoek beren hizkuntzari eustea —kontaktu-hizkuntza erromantzerik gabe, euskara izateak ere baduke horretan zerikusia—. Iduri luke Euskara Arkaikoaren bezperan okzitaniera oraindik bizirik zela Nafarroan Garaian (c.1076-c.1380) (Cierbide 2011: 763).

XV-XVI. mendeetan, gaskoiera, Lapurdi, Nafarroa Beherea eta Zuberoarekin mugakide diren Landeetan eta Biarnoan mintzatua da, baina baita Baionan ere. Euskararen erabilera-

27. Gaskoiera (eta bearnesa) okzitanieratik bereziki bere fonetikaz bereizten da; batzuk hizkuntz-familia beraren bi aldaeratzat dauzkate, beste batzuk bi hizkuntza desberdintzat (cf. Chambon & Greub 2002). Eztabaida horretan sartu gabe, biak bereizi nahi izan ditugu, alde batetik desberdintasun formalak azpimarratzeko, eta bestetik, aldaera bakoitzaren hiztunen jatorria bereizteko, mintzo gaskoia dutenak Garonaren ezkerraldeko eremukoak baitira —Baiona izan ezik, Ipar Euskal Herria kanpo utzirik—, eta mintzo okzitanoa dutenak, berriz, Tolosatik Niza bitarteko eremutik etorritakoak direlako.

28. Delako aldaera batua langedozieratik hurbilago da gaskoieratik baino.

29. Frankoak babesten zituen estatusa desagertu zenean, Pirinioez bestaldeko migrazio-mugimenduak gelditu ziren, eta okzitanieraren egoera makurtzen hasi zen: Nafar-erromantzeak erresumako hizkuntza ofiziala bilakatu eta okzitanieraren (eta euskararen) lekua hartu zuen.

eremuak zangopilatu gabe, hura da Erdi Arotik Euskara Arkaikoaren hastapenera arte Ipar Euskal Herrian idatzi administratibo eta juridikoetan erabilia. Adibidez, Lapurdiko gune garrantzitsuena den Baionako dokumentazioa —bereziki xiv-xv. mendeetakoa— gaskoieraz idatzia da eta Zuberoako errolda (*Le censier Gothique de Soule*, xiv. buk.) eta Usadioak (*La coutume de Soule,* 1520) haren aldaera den bearnesez (Cierbide 2011: 767-8). Nafarroa Beherean ere scripta gaskoi-bearnesak tradizio luzea du: nahiz eta notarioak behe-nafartarrak izan, xiv-xv. mendeetako dokumentu administratibo gehienak gaskoieraz idatziak dira —baita Nafarroa Behereko biztanleriaren errolda ere—. Areago, babes instituzionala jaso zuen, haren presentzia xvii. mendera arte bermatuaz. 1535ean, François I, Frantziako erregeak, frantsesa erresumako hizkuntza gisa ezarri zuen, Villers-Cotterêtseko ediktua plazaratuaz. Hortik aitzina, Lapurdiko eta Zuberoako dokumentu ofizial guztiak frantsesez idatzi ziren. Ez, aldiz, Nafarroa Beherean eta Bearnoan, bi eremu horiek barne hartzen zituen Nafarroako erresumako Joana Albret erreginak ordenantza bat plazaratu baitzuen 1561ean gaskoi-bearnesaren alde (Martel 2013: 513). Beraz, 1620an Nafarroako erresumak Frantziakoarekin bat egin arte, dokumentu ofizial guztiak (idatzi administratiboak, Estatuetako aktak, biltzarreko txostenak eta 1608-11an egin eta 1645ean argitaratu Forua) bearnesez idatziak dira.[30]

Ezaguna da Erdi Aroaz geroztik Hondarribia, Irun, Pasaia, Donostia herrietan ere komunitate gaskoidun sendoak zirela. Hondarribiko sorginei buruzko auzian, Isabel Garcia izeneko lekukoak erraten du *akerra* entzun zuela Donostiakoak eta Pasaiakoak gaskoieraz, eta Irun eta Hendaiarrak euskaraz deitzen. Horrek erakuts lezake xvii. mendean Donostian gaskoiera oraindik bizirik zela (Cierbide 2011: 769-70).[31]

Gaskoierak arrasto ugari utzi du Ipar Euskal Herriko eta Bidasoa inguruko toponimian, baina baita euskararen hiztegian ere. Une honetan, ezin dezakegu horrenbeste erran Nafarroa Garaian lau mendez bizi izan zen okzitanieraz.

### *1.4.4. Gaztelania*

Gaztelania biziki goizik bilakatu zen botere eta jakitate hizkuntza. Fernando III.ak (1217-1252) administraziorako ofizialtasuna eman zion, eta horrek ondorioak izan zituen Hego Euskal Herriko administrazioan (ik. § 1.3.2). Halaber, xvi. mendean garatzen hasten

30. Nahiz 1620tik aitzina dokumentu gehienak frantsesez izan, beranduago ere gaskoiera aurkitzen da noizbehinka. 1710ean errege-podereak bere Estatuei frantsesaren erabilera inposatu zien, baina 1718an, alderantzizko deliberazioak gaskoi-bearnesaren erabilera berrezarri zuen Nafarroa eta Bearnoko Estatuetan. Salbuespen hori, Joana Albretakoaren 1561eko ordenantzak eman estatus bereziari zor zaio (Martel 2013: 513).

31. Pasaian eta Donostian xx. mendera arte izan dira komunitate gaskoidunak.

den irakaskuntza-sarean, gaztelania da, latinarekin batera, erabil daitekeen hizkuntza bakarra (ik. § 1.3.2).

Hego Euskal Herriko lurraldeetan daukan hedapenari dagokionez, xv. mendean, nafar erromantzea guztiz ordezkatzen du Nafarroan, eta euskararen lekua hartzen hasten da Araban (§ 1.3.1). Baina xviii. mendetik aitzina indartuko da haren zabaltzea bi eremu horietan (ik. 7. kapitulua).

### *1.4.5. Frantsesa*

Erran bezala, 1539ko Villers-Cotterêtseko ordenantzak erregearen hizkuntza frantses erresumaren justizia eta administrazio hizkuntza bilakatzen du. Horren ondorioz, ordura arte Lapurdin eta Zuberoan idatzi ofizialetarako erabili gaskoiera ordezkatzen du. Nafarroa Beherean aldaketa 1620ko Batasun Ediktuaren —*Edit d'Union*— delakoaren ondotik helduko da. Hots, Euskara Arkaikoan frantsesa botere eta kultur hizkuntza izanagatik, ez da Ipar Euskal Herriko hizkuntza ohikoa; izan ere, gutxi zen horrelakorik l'Ile de Francetik kanpora. Izatekotan, euskarak gaskoierarekin du kontaktua, ez frantsesarekin. Ondorioz, garai honetan euskararen barnean izan zezakeen eragina biziki mugatua da; ik.. § 2.5.1.6 B Leizarragaren itzulpenetako mailegu frantsesen zergatiaz.

## 2. CORPUSA

### 2.1. Corpusaren ezagutzaz

Ikertu garaiko corpusaren % 80 edo gehiago Leizarragaren Testamentu Berriaren itzulpenak eta gainerako idazkiek betetzen dute.[32] Lekukotasun multzo hau berezia da oso eta gertakari horrek badu arriskurik hizkuntzalariarentzat eta filologia fin eta egokiaz baliatzea eskatzen du; horrela, esaterako, hainbat zarata sortu original grekoaren gaian, itzulpenaren lekukotasunean edo egilearen ustezko hizkuntzaren batasun-bilaketarenean (ik. § 2.5.1).

Oraintsu arte Etxepareren bertsoek betetzen zuten enparatuko corpusaren erdia edo gehiago; Leizarraga bezala, hizkuntza arruntetan Europa osoan hainbateko garrantzia izan zuten aro berriko bi pizgarri nagusiekin loturik ikusten dugu: erlijioarekin eta inprimategiarekin (cf. Arkotxa & Lakarra 2015). Gainerako corpusaren zati txiki baina garrantzitsua —Garibairen errefrau bildumak eta *RS*, guztiaren % 2a edo—, oso modu xelebrean ikertu izan da, egiletasunaren, jatorriaren, kronologiaren edo originaltasunaren aldetik eta ez beti beharrezko zehaztasunez hemen dagokigun hizkuntzaren aldetik.

32. Ik. § 2.5.5.1 Agricolaren lanaren eta garaiko finesaren inguruko erkaketa baterako.

Gainera, filologoek ez dute ezagutu edo erabili berandu arte lekukotasun ezinutziko zenbait: soilik 1958tik Landucciren 1562an osatutako hiztegia (Mayans eta Larramendik xviii. mendean erabili zuten, aldiz) eta 2004tik Lazarragaren eskuizkribua; gertakari honek izan du eraginik garai honen azterketan ez eze hizkuntzaren garai zabalagoenean ere.

Zati eta testu laburrek euskal filologiari zein hizkuntzalaritza diakronikoari berebiziko zerbitzua egin dieten Koldo Mitxelenaren *Textos Arcaicos Vascos*ekin (1964) eta honen gehigarri den Ibon Sarasolaren *Contribución al estudio y edición de textos vascos antiguos*ekin (1983) lortu zuten aitortza; baina, zorionez, igarotako urteotan bada horiei erantsi beharrik eta horietako hainbat bitxi berariaz aztertzeko premiarik ere (cf. Lakarra 1990b eta Bilbao 2013). Halere, corpusaren ezezagutzak edo filologia-jardun desegokiak izan du eragin gaiztorik enparatuko garaietako lekukotasunei buruzko lanetan ere, baina pentsatzekoa denez larritasuna beste inon baino markagarriago honako garai honetan gertatzen da.

Corpusaren barnean izaera atipikoa ez da soilik Leizarragaren ezaugarri bat, honen partea hain larria izanarren;[33] ahozko tradiziotik jaso errefrau bildumek eta kantuek ere (balada eta eresiek) hainbat hamarkada lehenagoko hizkeren aztarna garrantzitsuak gorde dituzte. Honenbestez, xvii. mendeko Isasti, Bela eta Oihenarten errefrauak ere gure corpusean sartu ditugu, haien hizkuntza aurreko mendeari baitagokio argitalpenarenari edo bildumaren eraketarenari baino gehiago.

Orobat, garai honetakoa bide dugu *Ana Juanixe* balada, nahiz lehen bertsio ezagunak xx. m. hasieran bilduak izan: *paseito bat emoidakezu / ama laban dan artian; itxagon daizu, mutil, itxagon / argia piztu artian; urten daik, mutil* (bis) */ alako bentanarian / ama neuriak urten dagian / kanpora sospetxerian; neure anaia antxe datorke / batian edo bestian,* etab. (Lakarra, Biguri & Urgell 1983) aurki genezake bertan.[34] Orobat, A. Ciden (2008) era askotako argudio estilistiko eta historikoez gainera, *Urthubiako alhaba* benetakoa zen eta kantatu gertakarien garaian sortua (xvi. mendean) nahiz 200 urte geroagoko bertsio bakarrean gordea; hori baieztatzeko hizkuntzazko arrazoiak aurkeztu ahal dira (Lakarra 2008b; ik. § 1.0.3ren akabuan): *Jauna, othoi indazu amaren bizia; /*

---

33. Ezin ahantz, ordea, Herring-ek eta bere lagunek diotena: «The question of representativeness is often framed in terms of a text's 'authenticity', with translated texts generally viewed as the least authentic, verse texts as only slightly more authentic, and texts which reflect the spoken language of the times as the most authentic and desirable» (2000: 3).

34. Gehi *dirade(z)* parea eta ahozko estilistika zaharrari dagozkion hainbat «X/X eta» egitura (*onelan plaza betian / onelan plaza betian eta / hainbeste jente artian*, etab.). Bidenabar, badira «Neure maiteak lantza bota egin eustan / lantzea bentanarean» eta «enterrau bere naikezu» *Lantzarena* deritzon baladan (cf. Lakarra, Biguri & Urgell 1983: II, 122-124), eta ez da arrazoi bakarra aurrekoarekin loturaren bat ote duen galdetzeko.

*amaren biziarekin aitaren libertatia*-ren (28-9) 2. lerroan tradizioko kantuetan ohiko den (eta balada horretan adibide gehiago dituen) «X/X eta…» egitura estilistiko zaharraren barruan soziatiboarekin egindako koordinazio are arkaikoagoa, artean Iparraldean lekukotu bakarra.[35]

Nabarmena da «filologia zehatzaren» beharra: Schuchardt-Linchmannen Leizarragaren edizioak (eta gogora honen pisu absolutoa zein erlatiboa garai honetako corpusaren barnean) 110 urtetik gora du; Etxepareren Altunaren bikainak baditu ia 40, *TAV*ek eta *Contribución* haren eranskinak 50 eta 35. Errefrau bildumez —testuaz eta horren ingurumariaz— bada zer ikertu oraindik eta baita Landucciren hiztegiaz eta Lazarragaren eskuizkribuaz ere.[36] Bistakoa da nahi eta behar dugunetik urruti garela baina ezin ahantz litezke azken hamarkadan Ariztimuño, Arkotxa, Arriolabengoa, Bilbao, Blanco, Gómez, Krajewska, Manterola, Oihartzabal, Reguero, Santazilia, Ulibarri, Urgell, Zubiaur, Zuloaga eta bestek burutu edo abian dituzten ikerlanak, Euskara Arkaikoaren irudi berri, oso eta zehatzagoa baitakarkigute.

### 2.2. Lekukotasun laburrak

***2.2.1.*** Esaldi bakarreko edo gehiagoko 60 bat lekukotasun gorde dira XV-XVI mendeetan (1200-1500 hitz guztira). Horien artean otoitzak (*Pater Noster Txikia* [XIV.m.], *Gure Aita, Kredoa, Miserere*), poemak (*Nafarroako Kondestablearen kantua* [post 1494], *Perutxoren kantua* [1536], *Karlos V.a eta Sorabillako zaldunen kantua* [1539; I[barguen] C[achopín] Kronikan jasoa), *Gure Principe don Henrique Iaunari* [1554], *Juan Amenduxekoaren olerkia* [1564]), gutunak (Matxin de Zalba eta Martin de San Martinen artekoak [1415], Juan Zumarraga [1537], Bertrand Etxauz [1584], Debako serora [1596], espioitzakoak [1598]), gutunetako pasarte edo hitzak (Nafarroako Artxibo Orokorrekoak [1415], Antonio Araozkoak Ignazio Loiolakoari [1545-6] edo Juan Irañetak Pedro Iterori [1549] idatziak), ezkontza formulak (Beorburu [1536], Uterga [1547], Olazagutia [1548], Bakedano [1550], Zufia [1552], Tolosa eta Esparza [1557]), epaiketaren bateko lekukotasunak (Burgi [1569], sorgin-agotei buruzkoak [1576-7], Sunbilla [1597]), eta enparatuak, (Martin de Arlesen liburuko [1510] eta Torres Naharroren *Comedia Tinelaria*ko [?1513] esaldi bana, Jacob Gebarakoaren hiletak [c.1588], *S. Frantziskoren 3. Ordenaren profesatze-agindua* [c.1520], Azkoitiko 1614ko *Sumario Breve*a, Rabelaisen

35. Ik. 2. kap. lekukotasun gehiagotarako eta hemen §3.5.5. Dakigularik, inork ez du hizkuntz frogarik eman Bereterretxeren Kantorearen testua XV-XVI. mendekotzat izateko, Jaurgainek nahi bezala.

36. Cf. Lakarra (2010b) *RS*ez, Urgell (2008c, 2015b eta prestatzen) Landucciz eta Bilbao *et al.* 2010 Lazarragaren testuaz.

*Pantagruel*eko zatia [1542], Karlos V.a eta mandazainaren elkarrizketa [Isasti, c.1620]…) aurki ditzakegu, faltsifikazioren batzuk (Leloren Kantua eta Andramendiko Idazkiak [1558-98])[37] tarteko.

***2.2.2.*** Alabaina, zati larri eta interesgarriena —baita, zorigaitzez, laburrena ere (%2 baino gutxiago— balada eta eresiek osatzen dute:

-*Olasoko kantua* (~1450, *apud* Garibai 1596).
-*Beotibarko kantua* (*post* 1321, *apud* Garibai 1571) Zaldibia 1571 eta Isasti c.1625).
-Urrexolako kantua (*post* 1388-1401), *apud* Joan Perez Lazarragako, c. 1588).
-*Akondiako guduaren kantua* (1390ean gertatua; *IC kronika*-n, ahozko tradiziotik jaso bide zuen kronika zaharren batetik bildua).
-*Sandailia* (XV. m.tik aurrerakoa, *apud* Pedro Saenz del Puerto y Hernani, c. 1588).
-*Pedro Abendañokoaren kantua* (*post* 1443, *apud* Francisco Mendieta, c. 1592).
-*Arrasateko erreketaren kantua* (1448an gertatutakoa; *IC*-n jasoa bi bertsiotan).
-*Milia Lasturkoaren eresia* (XV. m.tik aurrerakoa, *apud* Garibai, *Memorias*)
-*Errodrigo Zaratekoaren eresia* (1468 inguruan gertatua; *IC kronika*-n)
-*Abendañotxearen heriotzea* (1468).
-*Juan Lazkanoren kantua* (*post* 1476, *apud* Zaldibia 1571).
-*Jaun Diaoz Harokoaren eresia* (1497-1511 bitartean ondua; *IC kronika*n).
-*Xanfarron jaunaren kantua* (*post* 1545, *apud* Zaldibia 1571).
-*Salinasgo kondearen kantua* [*IC kronika*n].
-*Martin Bañez Artazubiagakoaren eresia* (post 1464, *apud* Gar 1584).
-*Bretainako Kantua* (1590 b.l; *post* 1489-91).[38]

---

37. Humboldt eta ondorengo asko nahasi zituen Leloren kantuak, Caro Baroja bera tarteko. *Lenguas y Protolenguas*ek lehenagoko iruzurgileek ez hizkuntza baizik eta *realia* aldatu ohi zutela dio, baina hizkuntza formei dagokienik ere bada amarrurik *Lelo*n. Esangabe doa, hizkuntza zaharraren ezezagutza zabalduak asko lagundu zuela horko *Lekot bidi Bizkaia* 'Bizkaia salbu, kanpoan utz bedi Bizkaia' zena *Lekobide* bizkaitarren Erromaren aurkako borrokan buruzagi txit entzutetsua bilaka zedin, XIX eta XX. mende hasierako literatura (eta are musika) foruzalean. Ik. Mitxelena 1986 istorioaren alderdi linguistiko eta testualaz; gainerakoaz bada dagoeneko bibliografia ugari.

38. Argitaratzaileak 1490-1510 bitartean sortutakotzat aurkeztu arren eta —Garibaik horren berririk ez zuelarik— ez barnean baizik eta itsasertzean ezaguntzat ez dirudi horrelako ezer ahozko tradizioan gorde zitekeenik, egitura metriko eta erritmikoaren faltagatik; horrenbestez, egiantzekoago dirudi 1590 aldera edo « kopiatu» zutenekotzat. Ohar bedi dataz hurbil dela IC-ko gainerako faltsuketetarik eta, oro har, Espainiako «Romancero Nuevo» delakotik. Sarasolak bere iruzkinean zenbait berrikuntza ere aipatzen ditu, gainera; alabaina, aitortu behar da hain testu laburrean horrenbestez koordinazio soziatiboko aurkitzeak beste alderantz garamatzala.

Asko dira zehatz datatzeke, 1393ko Marti Juanes Labierukoaren hilartitzetik hasi, xv. m. akabuko edo xvi. hasierako datekeen kantutegi frantses bateko errepika edo (ezinbestean) balada eta eresiak: Beotibarko kantuaz 1321ean izandako guduaz geroz egina dela baino ezin esan genezake —hizkuntzaren aldetik ez da bertan ezer aipagarririk— eta Akondiakoa 1390ko gertakari batez ari dela, IC Kronikara ahozko tradiziotik jaso zuen beste zaharragoren baten bitartez heldurik. xvaren erdialdera gertatu Milia Lasturren heriotza eta Arrasateko Erreketa ere 150 bat urte geroago heldu zaizkigu, noiz ahozko tradizio zuzenetik, noiz idatzia(k) bitarte. Ez da harritzeko hauetarik gehienak Araba eta Bizkai aldekoak izatea, bildu zituzten historialarien jatorria gogoan; lekukotasun laburrak kontuan hartuaz, bi lurralde horiek dira hobekien ordezkatuak.

***2.2.3.*** Ezin ahantz ditzakegu bi lekukotasun aski ezberdin, gainerako gehienak baino geroago ezagutuak eta corpus arkaikoaren ñabartasuna asko areagotzen dutenak, bai bertako testu-motei, baita lekukotutako hizkerei dagokienez ere. Bi kasuetan, gainera, «benetakotasun parametroan (ik. 33. oh.) oso gora kokatutako lekukotasunak ditugu, Leizarragaren itzulpen eta gainerako testuak zein Betolatzaren dotrina baino askoz gorago, noski, baina baita Lazarraga nahiz Etxepareren obra osoak baino ere; hau da, diren lekukotasun guztien % 90a baino gorago.

***2.2.4.*** Alde batetik, ikertutako garaiaren azkenerantz —(1597-1598, cf. Floristán Imizcoz 1993: 193)— eta ezaugarri arkaiko gutxiko hizkeran emanak ditugu Urthubiako andreak Gipuzkoako Gobernadoreari idatzitako 20 gutun (200 bat lerro orotara). Espainiaren aldeko espioitza-lanok Felipe IIaren eta Nafarroako eta Frantziako Enrike, Joana Albretekoaren seme eta berrikitan (25/VII/1593) Erromaren legera aldatutakoaren arteko gerlaren akabutsuan genituen.

Satrustegiren azalpen eta iruzkin ez beti egokien ondotik, Orpustanek eman ditu berriro testuak grafia modernoan, baina asko da oraindik ikertzeko gutunen hizkuntzari dagokionez; hala ere, markagarria da bertan ez dela <h>rik erabiltzen eta baita —sistematikoki ez bada ere— usu dakartela < ou > /u/ emateko eta baita testuetako mailegu zahar eta berri ugariak. Aditzean ere ez da —generoak ere ez du laguntzen— aoristo, futuro edo subjuntibo sintetikorik, etab. eta antzera izen sintagman.

---

Ik. 5. oharra *ConTAV* § 5.1.2ko «Otoitz Debotoaz». Nahiz Oihenartek gordetako «Andre Miliaren» bertsioa ere EArkekoa izan litekeen, ez du ageri horren aldeko ezaugarri garbirik. Juxtu alderantziz gertatzen da harengandik gertu zen *ConTAV* § 5.1.3an argitaratu « amodio poesia bizkaitarreko » adibidearekin: cf. 3. *Ecin essan leydis ondo munduac* eta, 5. *Glorias beteric iaio nindia*.

***2.2.5.*** Bestalde, Maioraren 2011ko liburuan, irain eta narraskeria bilketak hainbat esaldi eta kopla batzuk ere eskuratu dizkigu, zenbait <h> fonologikorekin batera (ik. § 3.2.2.1): *erroy asza, aspaldian egoçiric ago alquea* (Iruña 1538), *açareac oyna xabal / buztayna laburco / norc berea demana / beti da bellaco, / Marticho da alaquo / eta ala çaynezco casi dicat*… (Etxaleku 1545), *suc ezin diro erran au ola baten es galceagatic* (Lesaka 1549), *joan çaran bayno len joan alçinatean* (Ollo 1562), etab., irainak falta ez direlarik, noski: *çu çara vellaquo çarra* (1529 Iruñea), *puta ordia, apez alaba* (1535, ibid), *eçayz yxilduco ardancopa matela* (Galar 1536), *erroy [y]asza, aspaldian egoçiric ago alquea* (Iruñea 1538), *oçar ladron çarra* (Iruñea 1542), *apo sorguina* (Aezkoa 1544), *eror meaqua ustela, tripa andia* (Añorbe 1544), *doyllor charra* (Iruñea 1545). Interesgarriak izan litezke egile beraren *Reino de Navarra. Apodos y Léxico Autóctono histórico de Navarra,* besteak beste.

***2.2.6. Eranskina Ibarguen-Cachopin Kronikaz***

Julen Arriolabengoari (1996, 2007, 2008) zor diogu Ibarguen-Cachopin (~1558-1598) kronika bezalako lekukotasun bikain baina gutxi ezagutu bat ikerketa filologikorako prestatzea.[39]

Oraindik argitaragabe den tesian —bada eskuragarri, halere, *Euskara Ibarguen-Cachopin Kronikan* haren analisi berritu eta osatua (2008)—, Arriolabengoak Kronika editatu eta ikertu du eta horrela, lehenagoko ikertzaileen hainbat irakurketa zuzentzeaz eta osatzeaz landa, folio zail eta irakurgaitzetan lehenik ezagututako kantuen bertsio eta zati zahar eta berriak —Arrasateko Erreketa, Salinasko Kondea, Akundiako Guduarena, Juan Diaz Harokoren eresia, Martin Juanez Labierokoaren ilartitza, edo Sorabillako aitonen semeen kanta, Lelorenaz aparte— eta are kantu oso berri ezezaguna ere, «Errodrigo Zarateko»-rena, alegia: bertan ageri diren Ahaide Nagusietako guduetako gertakari eta pertsonaiekiko aipuengatik Arriolabengoaren ustez 1468 ingurukoa dugun balada:

*Arma-escuduac on dira dardos,*
*Pareric estabe canporacos,*
*Çaratearrac galdu ei dabe Marquia-Çuya çeculaco*
*Errodrigo Çarateco, selan engana sindean*
*Jaun Juane Abendañocogas gudua arçen sanean*
*Bi milla guiçon oi ditus bere lelengo deiean,*

---

39. Aurretiaz ere erabilia zen baina —seguruenik bere tamaina erraldoiagatik eta ez gutxiago bere erabilera-zailtasunengatik— soilik aldizka eta ez beti zuzenean, Mitxelenak («Arrasateko Erreketa»-ren bertsio bat dela eta) edo Sarasolak (bertan diren bi hiztegitxogatik), esaterako.

*Lau milla bere baleduque premia letorrenean* (…)

Azken urteetan ahozko literatura zaharrari egindako ekarpen interesgarrienetarik den oni § 4.3n aipatu ekarpen lexikoak ere gehitu behar zaizkio.

## 2.3. Errefrau bildumak

### *2.3.1. Garibai*

Juan de Idiaquez kortisauaren eskariz, Esteban Garibaik bi errefrau sorta osatu zituen 1591-1592. urteetan. Urkixok (1919) erakutsi zuen bi bilduma horiek ez direla guganaino eskuizkribaturik heldu, baina bai XVII. mendeko *Refranes en Bascuençe compuestos por Esteban de Garibay y Çamalloa*, Madrilgo BNko G139 eskuizkribua (=A); bestalde, Benito Maestrek XVIko koadernotxo bat erregalatu omen zion Francisque Micheli euskal errefrauekin —eta hilen eta egunen izenekin gehi zenbait aditzekin— Cc79 (=B), hura 1846an Madrilen zenean. Kuaderno horretaz baliatu zen Francisque Michel Oihenarti buruzko liburuan errefrauak eranskin gisa emateko. B bilduma Gar.ena da, baina Urkixo ezezkotan zegoen Az: bi sortak erkatzean 37 errefrau errepikatu aurkitzen dira, eta hortik atera zuen Gar.en 2.a ez zela A baizik eta besteren bat, agian *RS*.

Haren arrazoiak ekoizpen hurbiltasunari eta bildumetan (Bn nahiz *RS*en) omen diren Bizkaiko eta Gipuzkoako hainbat handikiri buruzko errefrauei lotuak ziren (agian Garibairen edo Idiaquezen familiakoak izan zitezkeen); halaber, Garibai ez baina haren semea Iruñen bizi zen eta hark argitara omen zezakeen *RS*. Hizkerari dagokionez, aurreko ikerlarien iritziak batuaz eta konbinatuaz Urkixok *RS* Garibairen jaioterria zen Arrasateko orduko euskaran idatzia dela ondorioztatzen du.[40]

Baina Aren originala eta B Gar.enak direla froga liteke (cf. Lakarra 1986a) bildumen tamaina,[41] kopiagilearen lekukotasuna, errefrauen ordena, hizkuntzaren analisia,[42] A osatzeko B ez den beste original baten beharra eta grafiazko loturak kontuan izanik; gainetik, *RS* ez da Gar.rena, egile ezezagun bat(zu)ena baino. Honetarako ere grafiazko

---

40. J.C. Guerrari eskatu zion iritzia; honek *RS*eko errefrau gehienak Oñati, Arrasate, Aramaio, Otxandio, Legutio eta inguruetan bilduak zirela erantzun zuen, bere bulegora [XX. mendearen hasierako urte haietan] zetozen baserritarren hizkeraren antz-antzekoak (!!).

41. Gar.en bildumek *cuaderno* bana zuten eta hitz horrek orduan esanahi mugatua zuen: egoki 16 orrialdetako paper bildumentzat baina ez 64 ezagun eta (gutxienez) beste 16 zituen *RS*entzat.

42. Errefrauon hizkuntzak Gar.en egiletasunaren alde jokatzen du. Aren kopiagilea (egilea Urkixorentzat), aldiz, giputza zela hainbat xehetasunek frogatzen du: cf. A 4, 9, 57 *norc,* 5 *erreverria,* 58 *verriac,* 46 *eliçara,* 48 *ayceriac,* 3 *goiz,* 63 *du,* 53 *miña,* 17 *arraiac,* 5 *echagalçaigarria,* 9 *echaguinean.*

eta hizkuntzazko argudio larriak[43] dira: Garibairen eta *RS*en sistema grafikoen ezaugarri bereizleak eta xehetasun esanguratsuak aztertuaz nabarmena da beren arteko urruntasuna eta A (< *W) eta Bren arteko lotura zuzena:

1. <sh> grafia proposatu zuen Gar.ek Bn (cf. § 3.1) eta hor eta An erabili ere, hemen are Bn kiderik ez duten errefrauetan). *RS*en <sh> bakarra da (338 *oshoa*) eta horren aldamenean badira <xs>, <csh>, <ts>, <shs> eta are <cshsz> (*vicshdunic*) ere, nahiz % 90 baino gehiagotan < s(s) > orokor arrunta erabili.
2. <~> ere Gar.en proposamena dugu, sudurkaritasuna adierazteko: berriro ere Bn da azalpena eta A27n (XVII. mendeko kopiagile gipuzkoarrari itzuri zitzaion) adibidea: < ardaô >; ez da honelakorik *RS*en. Ik. § 3.2.1.3 bokal sudurkariez.
3. *RS*en <h>ak inoiz bokalarteko hiatoak adierazten dituzte: 220 *parrahua*, 360 *quehea*, 372 *hahoaz*, etab.; ez da antzekorik Gar.engan. Konparaketa are esanguratsuago da hitz hasieran, Mitxelenak duela 40 urte ikusi bezala: 84 *h-* dira *RS*en, horietarik 44 <hu->, 19 <ho-> eta 24 <ha-, he-, hi->. Proportzio horiek —fonologikoki urri den /u/-ren nagusitasun markagarria— ez dira halabeharrez itxaron litezkeenak eta, beraz, <h-> horien bitartez balio bokalikoak kontsonantikoetarik bereizten direla ohartu beharra dago; Gar.ek ez du honelakoren arrastorik ez bilduma batean ez bestean.
4. B-k sistematikoki <eç> du ezeztapenean; Ako kopiagileak gehienak <ez> bihurtu ditu, inoiz originaleko <eç> itzuri arren; argi da, beraz, grafia honek A (honen originala) eta B lotzen dituela beren artean. *RS*en 54 kasutatik 53 <ez> eta <es> 1 dira, Gar.en usadiotik ezin urrunago.

Dialektologia zaharrari buruzko ikerketak gibelatuak dira[44] eta zail da erabakitzen duela 400 urtetako izkribu baten euskara zein herritakoa zatekeen, batez ere hainbatetan bilduriko materialez osatua izan litekeenean; halere, ez da ezinezko *RS*en hizkuntza baliatuz (Lakarra 1996b) beren etorkiaz zertxobait jakitea: zehaztasun gehiagotan sartu gabe, errefrauak mendebaleko Bz daude funtsean eta horrelatsu pentsatzen zuten Azkuek eta Mitxelenak ere Orozko aldeko euskararen zantzua hartzean. Baina horra jo baino

---

43. *RS*i dagokionez, XVI. mendeko Arrasaten egiten zena dela frogatu asmoz Urkixok darabiltzan arrazoibideen ahuleziaz ohartzeko aski da *emaiten*-en kasua ikuskatzea: ez da ezeren froga, B zaharreko testuetan *emon* baina *emaite-n, -ko, -a*, etab., agertzen baitzen salbuespenik gabe; lehen *emote-* XVIIIaren hasieran dugu (Artzadun 1731) eta orduan ere gutxiengo erabatekoan.

44. Arestian bada B. Ariztimuñoren (2016) lan interesgarri bat testu paraleloen teknikan oinarrituaz («Gure Aita» eta beste zenbait otoitz baliatuaz), baina asko da falta dena dialekto modernoen izaera betierekoaren ustea kentzeko (ik. § 5.6 eta 2. kap, § 5 EBZren inguruan).

lehen, marka bedi are errazago dela *RS*etako errefrauok garai hartako Arrasate aldeko euskaran *ez daudela* frogatzea, hor baititugu konparatzeko, besteak beste, Gar beraren testuak: bai Bko errefrauak eta baita bildu zituen kanta eta kanta zatiak ere.

*RS* eta Garibairen arteko hizkera ezberdintasun erabatekoa ikusteko datu nahikoa da:

Gar.en errefrauetan beti (18/18) *eta* juntagailua erabiltzen da eta hori soilik haren bitartez ezagutu testu laburretan ere (Mitxelena 1985b: 214); *RS*en, aldiz, 135 *ta* / 14 *eta*.

*Burnia* dakarte Ak eta Bk, *burdia RS*ek; *euguia* Ak-Bk, *euquiarren RS*ek, *gogaeta* da «pensamiento» A-Bn, *gogaiera RS*en; A-B *jabea*, *RS jaube*, *jaubea*; B *urri* 'marzo', *RS urrietea* 'octubre'; *RS*en soilik *done*, bai hori eta baita *san* eta *santi* ere askozaz txikiago diren A eta Bn. A eta Bn *dongueac*, *RS deunga*, *deungen*, *deungueaenean*; A *izen*, *RS hucen*, *huzena*.

Lexikoan bada *RS* eta gainerakoen etorkiak bereizteko xehetasun haboro. Ez du zer aipatu *RS*en Gar.en bildumetan ez den hitzak agertzeak, hura askoz handiago izanik. Alabaina, markagarri da Gar.k ia hapaxik ez izatea (3); *RS*en, ordea, ugari dira oso: gutxitu beharrak gutxiturik, 150etik gora genituzke (adizkiak kanpo) gainerako testuetan kiderik gabeak. Gar.en 3ak 90 errefrautan agertzen dira eta *RS*eko 150ok 560tan, honen proportzioa askoz handiago delarik: *RS* Gar.ena izateko lehenak dituenak baino ia zortzi bider gutxiago izan beharko lituzke (edo alderantziz).

Aditz morfologian Gar.en errefrauek ez dute asko eskeintzen, bildumak txikiak izateaz gainera, aditza ezabatzeko joera baitu biltzaileak. Bada, hala ere, etorki ezberdinen aldeko daturik: *-n* > *-ø* da lehenaldian Bko hizkera batzutan, ez gehienetan; fenomeno hori mendebaldeko itsasaldean, Bilbo alboko herrietan izan da Zabalak eta Azkuek markatu legez, Zornotza arte edo (cf. IC kronika; bada adibiderik § 4.3n). Hara *RS*eko 52 *citean*, 75 *nenguiâ*… baina 244 *neuca*, 244 *eusta*, 294, 359, 486 *cidi*, 332 *nentorre*, 332 *necarre*, 344 *ezequida*, 388 *citea*, 438 *nencarre*, 535 *eguia*, 535 *nenza*, 55 *neguia*. Gar.en errefrau eta enparatuetan ez da *-n*gabekorik: A 2, B 1 *cidin*, A 11 *çiteçen*, A 19, B 8 *engarren*.

**edun*en 3p.pl.ik izan ez arren, *daue, euen* bide ziren; hori diote egungo hiztunek (*auen*) zein XVIII hasierako Mondragoiko Barrutia aramaioarrak. *RS*en, ostera *daude, *euden*, *-d-*rekin, erdi-mendebaleko hizkera zahar eta modernoek legez (azken hauetan *-d-* > *-r-* kausi liteke usu).

Erkaketak emandako frogak aski eta askotarikoak dira *RS* bilduma Gar.en eskutik ez zela atera erakusteko eta bai, aldiz, B eta *W, Aren originala.[45]

45. Dirudienez P. Urkizu (2015) ez da ohartu gai hauetaz eta are gutxiago § 2.3.2n ukitzen direnez; harrigarri ere bada —hizkera zaharraren behin-behinekoak ere ezagutu gabe— are *RS* bezalako

### 2.3.2. *Refranes y Sentencias*

1596an Iruñean argitaratu zen[46] *Refranes y Sentencias, comunes en basquenze, declaradas en romance, con letras*…; 1896an berrargitaratu zuen van Eysek Darmstadteko biblioteka batean II. Mundu Gerran desagertu arte gorde aletik. Honek ez zirudien osoa, ez baitzekarren ez kolofoirik, ez egile izenik eta barneko antolamendua bera (errefrauen hurrenkera) ez da erraz antzematen. 64 orrialde horietan gorde 539 errefrauei jatorri bereko 21 gehitu zizkien Mitxelenak: 20 Oihenarten eskuizkribu batetik —bertan ziren Darmstadteko aleko beste hainbat— eta bat Larramendiren *Hiztegi Hirukoitz*aren (HH) Eranskinetik.[47]

*RS* «euskararen historiaren *entziklopediatzat*» (Gorostiaga) jo izan da arrazoi osoz eta tamainaren bateko testurik arkaikoena bide dugu (ik. § 1.0.1 eta § 3 passim). Urte berean argitaratu Betolatzarekiko aldea handia da arkaikotasunean eta, gehienik, *RS*en izaera tradizionalak (ahozkotasunaren hizkera formulaikoak) azaltzen du, bilduman ez 1596ko hizkera, baizik eta hainbat hamarkada eta are menderen bat lehenagokoa islatzen baita. Lexikoan ugari dira arkaismoak, forman nahiz esanahian, baina, nolanahi ere, morfologian eta sintaxian dira ugarienik: deklinabidean (ablat. zaharra, Xekin Y, genit. konparazioan…) eta aditzean (aoristo perifrastiko nahiz sintetikoak, futuro eta subjunktibo sintetikoak, inperatibo futurozkoak, hainbat aditz trinko, *-zu* 'pl.', etab., sintaxian partikulak (*oro*), predikatibo eta beste zenbait IS -ø markarekin, 1. eta 2. graduko artikuluak, perifrasiak, etab.

---

lekukotasunaren hizkeraren jatorriaz azterketa-parodiak argitaratzera iristea. Barregarriena, jakina, Bren eta *RS*en hizkerak (grafiak, tamainak, estiloak, egiturak eta besteak beste) erkatu gabe egile eta jatorri bereko direla defenda litekeela ere pentsatzea. Eta errematatzeko ondokoa: «Bokal sudurkarien kasuan nasalizazio ikurra zutenei ezarri diegu, eta ez dutenei ez diegu erantsi: *beiê* > *beien* (*RS* 8), *su-ateâ* > *su-atean* (*RS* 33), *diratâ* > *diratan* (*RS* 128), *igui* (*RS* 3) eta ez *igûî* (Lakarra 1996: 249), *burdiaric* (*RS* 15) eta *ez burdîârik* (Lakarra 1996: 253), *ardaoa* (*RS* 28) eta ez *ardaôâ* (Lakarra 1996: 259)… irakurketa erraztearren (Urkizu 1995: 81)». Edizio kritiko baten helburu nagusia «irakurketa erraztea» ez dela ikasteaz landa, komeniko bide litzateke laburtzapen grafiko hutsen eta nasalizazio marken artean bereizten hastea ere (ik. 125. O3h.).

46. Bukatu ote zen zalantzan jarri da ez Darmstadtekoan (ez Larramendirenean eta ez Oihenartenean) kolofoirik ez zelako, baina horiek soilik lehen kuadernoak zituzten eta liburuak bazituzkeen gehiago; orain (cf. Ulibarri-prestatzen) ale gehiago izan zirela badakigu —XVII hasieran Salamancako Unibertsitateko Bibliotekan, esaterako— eta are horien aipuak atzerriko ikertzaileen artean ere. Seguruenik, Vinsonengandik datozen zalantzok liburuak pleguka, enkuadernatu gabe, argitaratzen zirela ez gogoratzetik bide datoz.

47. Bazuen *gutxienez* (ik. Lakarra eta Urgellen zenbait lan) beste koaderno bat (135 bat errefrau, 650 edo 700, guztira) eta, beharbada, baita gehiago ere izan zitzakeen, garaiko errefrau bilduma argitaratuek milaka errefrau baitzuten usuenik.

2.3.2.1. Jatorria

Ikusi dugunez (cf. § 2.3.1) *W (Aren originala) eta B, biak, dira Garibairenak eta ez soilik 2.a. *RS* eta Gar.en errefrauak erkatzean hizkuntzazko datuek (besteak beste) ez dute zalantzarik uzten, hura eta *RS* azpieuskalki ezberdinetarik —are bata besterik Bonaparteren mapan urrutienak liratekeenetarik— zirela salatzeko; hots, lehendabizikoa hego-ekialdeko enparatuko lekukotasunekin (Barrutia, Landuccio, Lazarraga) doan bitartean, *RS*ek iparmendebalean ditu kideak.[48] Ondorio horiek abiapuntutzat harturik, aitzinamendu zenbait emendatu ahal dira *RS*en jatorriaz, *realia*etan, eta literatur soziologian oinarrituaz, arrazoiketa sendoenak halabeharrez hizkuntzazkoak diren arren (cf. Lakarra 1996b: § 4). Herri edo familia izenek ere —92/404 *Butroe*, 167 *Butroeco, Plencian*, 270 *Muxica*, 273 *Ybarguengorean*, 284 *Aramayo*, 334 *Goliz*, 387 *Albia*— Bizkai mendebalera garamatzate, Bilbo edo haren iparralde hurbilekoak baitira gehienak. 387 *Albia deunga dustien albia* «Albia, nido de todos los malos»-ek ez bide luke interes edo arrazoi handirik hortik urruti, baina bai hor, Albian baitzuten beren etxea Bilborekin liskar larriak zituzten handikiek.[49]

Antzera literatur soziologiak ere: errefrau bildumak humanista hiritarren ekoizpen ziren garaiko Espainian zein handik at, ez baserrietako apaiz edo bestelako idazleenak (cf. Lakarra 1996c eta Bizzarri 2009, adib.); gainera, Mikoletak dioskunez Bilbon aurretik izan zen nolabaiteko literatura landurik, herrikoiaz landara, Italiatik zetozen neurrietan ere idazten zutelarik. Argudio horiekin ongi lotzen dira orain arteko hizkuntzazkoak eta ondokoak ere.

Azkuek bilduma Orozkokotzat omen zuen baina *Euskalzale*-ko iruzkinetan ez da inongo monografiarik *RS*en jatorriaz: zuzenkizunak, arkaismoen azalpena, ohar historiko eta kulturalak, hizkuntzazko gogoetak… denetarik bildu arren. Berariaz aipatzen dituen herri edota bailaren iruzkinetarik 9tan Bilbo-Txorierri, 6tan Arratia, 5etan Orozko, 4tan Oñati eta 2tan Mundaka ditugu. Orozko eta Oñati, gutxiago aipatzeaz landa, bata bestearen etsai dira jatorri bilaketa honetan, eta ezer adieraztekotan, bi bazter-hizkerak *RS*eko arkaismoen iraupenaz eman lekukotasuna genuke, batez ere biek bat egitean. Azkueren Bren historiarekiko 1935ko lanean ere ez da Orozkoren aldeko argudio zuzenik ez zeharkakorik.[50]

---

48. Gar.en bildumek eta *RS*ek ezberdintasun larriak dituzte hizkuntzaz eta grafiaz landa ere: tamaina (*RS*en 560 gordeak baina gutxienez 700 edo, 63/64na Gar.ek), egitura (zenbakiak hitzen gainean *RS*en, lerroarteko itzulpenak eta azalpen gehigarriak Mondragoikoak), estiloa (*RS*ek besteak baino aditz jokatu gehiago)…

49. Ik. Lakarra 1996b-n laburtu Urkixoren azalpen historikoak.

50. Orozkoren aldeko hipotesia agertzen da berriro Mitxelenaren Euskaltzaindiko sarrera hitzaldian.

Orozkon idatzi eta Gaminde eta Garigortak (1986) argitaratu 1739ko otoitz labur batzuk *Viva Jesus*ekin eta *RS*ekin erkatzean testu horretatik *VJ* hurbilago kausitzen dugu bokalismoan: cf. 2 *Iaunec*, *situcen*, *hicen zan*, *crucificadue*, 3 *Trinidede*, etab.; ez da honelakorik *RS*en. Kontsonanteetan Mikoletak xvii erdian aitzinatuago zuen txistukari neutralizazioa eta ez digu ezaugarri honek balio *VJ RS*etik bereizteko, baina bai *RS* Orozkotik. Aditzean 7 *daudeena*, 9 *ofendidu daudeenagas*, 11 *errecibietan daudena edo celebretan daudeena,* aurkitu arren, ez da *RS* eta Mik-ren *-n* > *ø* lehenaldian. Erorketa mota hau Bilbo inguruko kostaldean lekukotua da (baita ICn ere) baina ez hegoalderago; horkoak dira *VJ* eta Orozkoko xviiiko erreguak, bada, eta iparraldeko(ago)ak Mik eta *RS*.[51]

Mikoleta eta *RS*en artean badira aldaerak fonetikan, morfologian eta lexikoan eta, gainera, *RS*eko hizkeraren polimorfismo (batez ere lexikoak) adierazten digu horko errefrau guztiak ez direla hizkera bereko (= Bilbo eta inguruetakoa):[52] alabaina, ez da 1745 aurretik *RS* eta *Modo breue*a baino hurbilagoko bi testu Bn; hizkerak —gehi aipatu *realia* eta literatur soziologiako arrazoiek— dioskunetik, Bilbon edo handik hurbil (Txorierrin ? Butroe inguruan ?)[53] jasoak dira errefrauok, eta ez zen inon inor horiek biltzeko zein moldatzeko aukera hobean.

#### 2.3.2.2. *RS* Hernán Núñezen itzulpen?

Urkixoren edizioko oharren bitartez jabe gaitezke *RS*ez zituen ideiez. Hauen artean da Hernán Núñezen errefrau bilduma famatua (1555) izan zuela hark iturri nagusia (cf. Lakarra 1996b).[54] HNtik hartu omen ziren atzerriko hizkuntzetako errefrauak zein gaztelaniazkoak argudio indartsu lirateke HNrekin lotzeko errefrauok… soilik handik

---

Bertan «ezta nora ezekoa, jakiña, [errefrau] guztiak leku berean sortuak izatea» markatuaz hasten da eta «zenbaiten ustez, badute batzuek Orozko-aldeko usaia eta neroni ere bat natorkie» diosku. Alabaina, errefrau jakin baten eta, agian, beste zenbaiten etorkiaz ari zen, ez bilduma osoarenaz.

51. *VJ*ren etorkiez ik. Koldo Ulibarriren eta Eneko Zuloagaren lanak; testuaren beraren edizio bikaina da Ulibarrirena (2010).

52. Lehendik ere ia bistakoa zena —gogora horko Plentzia, Gorliz, Butroe eta enparatuen aipuak—, are garbiago da orain Zuloagaren lan bikainaren (2011) ondotik.

53. Horkoak dira, halaber, Zuloagak (2011) argitaratutako hirurak; hirutik bi Darmstadteko aleari eskerrak (270 eta 92.a, hurrenez hurren) ezagutzen genituen aldaera nimiñoekin eta 3.a (*Garaianago, erria gordeago*) ez da oso adierazgarria hizkuntzaren aldetik bere jatorriaz zehaztasun handirik egiteko.

54. Ez da zer luzatu hipotesi honek Gar.en egiletasunaz Urkixok berak eraiki hipotesiarekin (edota Gar.en beraren lekukotasunarekin) dakarren kontraesan gaindituezinaz.

har bazitzakeen; alabaina, gehienetan ez da baldintza hori betetzen. Bestalde, ikerketa zehatzagoak erakusten du halabehar eta axaleko antzekotasun gehiegi zela («ad sensum», egiturazko egokitasunik gabe). Bada oraindik teoriak nekez azal lezakeen gertakari larririk: *RS*eko erdal testua da euskarazkoaren itzulpen, ez alderantziz, inoiz euskarazkoa ulertzen ere ez duelarik; Mitxelenak eman zuen dagoeneko honen adibide garbirik eta gure aldetik beste zenbait eransten ditugu aurreraxeago. Honelakoak azaltzeko asko garestitu behar genuke Urkixoren teoria, bi itzultzaile behar bailituzke, garai eta hizkera ezberdinetakoak: HNtik *RS*eko euskarazkoak eman zituena lehenik eta hauetarik horko erdarazkoa erantsi zuena, gero.[55]

Halaber, zergatik dira ustezko originala baino luzeago edo laburrago *RS*ek HNtik hartuak? Zergatik dituzte aldaera handi edo txikiak ustezko HNeko originalekiko, *RS*eko gaztelania beti ere euskarazkoari lotzen zaiolarik? Ustezko itzulpen lan horretan erabilitako euskararen hainbat aldaera txikik ere ez du laguntzen: sinesgarriago litzateke polimorfismo hori errefrauen jatorri diferenteei lotzea —hurbileko hainbat hizkerari— eta ez itzultzailearenari (ik.. Lakarra 1996c, 1997c).

Badira HNtik itzuli izanaren aurkako argudio larri gehiago. Hasteko, Urkixok ez zion kasu handirik egin Larramendiren lekukotasunari: «[*RS*] contiene refranes del Bascuençe, *traducidos en castellano demasiadamente a la letra*». Izan ere, titulua bera («Comunes en basquence, declarados en romance *con números sobre cada palabra, para que se entiendan las dos lenguas*») eta hitzen gaineko tituluan markatu zenbakiak jarriko ote erdaratik itzuliak baziren eta ez Larramendik ohartu legez, euskaratik erdarara eta hitzez-hitz?[56] *RS* gehienean HNtik hartua balitz Larramendik eta —batez ere— Oihenartek hartuko ote zuten hortik eskukadaka? Ez da sinistekoa hizkuntza irakasteko erabiltzea originala gaztelaniazkoa izan balitz ere (gogora hitzen gaineko zenbakiak), ezta *RS*en eskubitara kokatzea ere, guztiz desitxuraturik (asko emendaturik eta gehiena kendurik) HN, Urkixoren ustezko iturriarekiko.

Bidezkoago da pentsatzea *RS*en iturri nagusia ez dela HN, ez eta seguruenik idatzizko eta gaztelerazko enparaturik ere.[57] Errefrauok herrikoiak bide ziren, gehienak bederen,

---

55. Ohar bedi ustezko originala (HNkoa) ez dela kopiatzen eta HNko hori ez datorrela ia inoiz bat eskubiko gaztelaniazko zutabearekin.

56. Bidenabar, zenbakuntzaren oinarria ere beti euskarazkoa da, cf. *RS* 2: «*Aberas* (1) *yzaytea baño* (2) *hospe* (3) *ona* (4) *obeago* (5) / Mejor (5) buena (4) fama (3) que ser (2) rico (1)».

57. § 3.6 atalean hainbat erabili dugun Endika Blancoren (2014) Euskara Arkaikoari buruzko lan bikainak lehen garatu gabeko beste argudio-bide bat ere ematen digu *RS*en gehiena ez ezik zati aipagarriak ere HNtik itzuliak direla mantentzea nekez uler litekeela erakusteko: izan ere, hipotesi horren barnean nola azal *RS*en % 20ra ere ez iristea maileguak eta % 80tik gora izatea ondare zaharrekoa? Leizarragak % 45 mailegu eta % 55 ondare zaharreko ditu eta Lazarragak berak % 50

garai hartan eta aspalditik, 1596rako aski zaharkitutako —eta are hainbatetan ulertezin bilakatutako— hizkerak salatu legez; gero ere zenbait (16, 42, 52, 64, 116, 124, 170, 202, 281, 291, 294, 305, 354, 387, 397 eta 428.aren kideak) bilduak ditugu Azkueren *Euskalerriaren Yakintza*-n. Aurrekoei, bistako arrazoiengatik, bi multzo gehitu behar dizkiegu: euskal gauzez, herriez, familiez, gertaerez… ari direnak eta formaren arabera edo hitz-jokoak direlako soilik euskaraz uler edo sor litezkeenak: cf. 88. *Olaso, guichi bazuc ylaso*; 92. *Celangoa da Butroe oroc daquie*; 167. *Erioac ereçan Butroeco alabea Plencian*; 270. *Muxica arerioacaz aguica*; 273. *Gaçean, gaçean ta ez Ybarguengorean*; 284. *Aramayo dabenac ez lemayo*; 149. *Hurrieteac hurri gauçac ta hurri dira aren bearrac*; 169. *Mi gestoa minago mintea baño*.

HNkoen kidetzakoen taula bat eraikiaz, nabarmena da *RS*eko «itzultzaileak» ez duela HNeko ordena errespetatu berea ezartzerakoan. Hori, berez, ez da esanguratsu, Urkixoren ustezko euskal ordainak ordena alfabetikoan emanik oso bestela amaitu behar baitzuten; alabaina, HN eta *RS*eko kidetzakoak HNren orrialdeen arabera erkatuaz —eta hori legokieke HN iturria balitz—, Urkixoren ustezko bikoteak honelatsu gertatuko lirateke: HN 282(2) / *RS* 110-1, HN 387-8 / *RS* 191-2, HN 125-7 / *RS* 193-4, HN 303-4 / *RS* 226-7, HN 358(2) / *RS* 246-7, HN 60(2) / *RS* 288-9, HN 278-9 / *RS* 297-8, HN 292-3 / *RS* 529-30; hirukoteak HN 334(3) / *RS* 228-29-31 eta HN 413(2)-411 / *RS* 325-6-7. Horien artean HNen orri berean direnek ematen dute segurantzarik handiena, gainerakoak ere kontuan hartu arren, eta bakarra da bere luzeran —eta, beraz, segurtasunean— ondokoa: HN 341(3)-342(2)-339(2) / *RS* 215-16-17-18-19-20-21. Honelakoak, ordea, gehienez ere % 1era edo iritsiko bide dira.

1960ko hamarkadan egindako zenbait lanetan Mitxelenak ireki zuen beste bide bat ere areagotzeko erdarazko balizko originalarekiko zalantzak: 208 *Odol bearbagea* (*agirtuko da egia eurea*) 'sangre sin ser necesaria' itzulia dakusgun arren, 'errugabea' genuela argudiatu zuen [cf. horrelaxe Milia Lasturren eresian], mito zahar eta zabal bati dagokiolarik. Geroztik bilduma barneko —ezker > eskuin, ez *HN > *RS*— itzulpen desegoki gehiago bil liteke: *ekix* 'en adelante' (zuzen 'mozkor, hordi'),[58] *ze bez aurki*

mailegutik gora. Are gehiago, ondare zaharreko hitzen nagusigo erabatekoaren barnean, % 85 hitz bakunak dira eta % 10etik behera eratorriak (oso zifra ulertezinak itzulpen-lana balitz): Leizarragak 2/3 inguru bakun ditu soilik eta % 25 edo eratorriak. Orain artekoa aski ez bada, gogoan izan bedi *RS*ri dagokionez Sarasolaren hiztegitik kanpo gelditu den gehiena ere ondare zaharrekoa dela eta gutxiena mailegatua; Leizarragari dagokionez gauzak juxtu alderantziz dira eta hor ere bere original frantsesaren arrasto garbia aurki genezake tradizio gabeko edo bertakotu gabeko mailegu horietan.

58. Mitxelenak *gaurkiz*-en ustezko parekotasuna oinarri harturik **egu-giz* 'gaurtik aurrera' etimologia eman zion baina gazt. *equix* (letraren izena = 'borracho') hainbat testu klasikotan zein behe-mailakoetan aurki liteke, Covarrubias, *Autoridades* eta enparatuko hiztegiak barne.

*gero* ‘no diga luego después’ (z. ‘ez beza gero eriden’), *seiari bezuza* ‘al niño regala’ (z. ‘al niño ahuyente’; cf. 404 *ez ysquilosay echi* ‘no dexes las armas’, 525 *Eshseco mirabeari echi* ‘a la siruienta de casa déxalla’: DAT x ABS; Laz-ak ere baditu zenbait)[59] edo 418 *batak dagiana besteak igini* ‘lo que haze uno otro lo entiende’ [z. *iguini* ‘aborrece’],[60] 481 *zenzun egarria estoa sartu buruan* ‘Juicio traído no suele entrar en cabeza’ [z. ‘juicio gastado, perdido…’],[61] etab.[62]

### *2.3.3. Isastiren errefrauak*

Gortean 1625 baino lehen osatu eta XIX. mendean argitaratu *Compendio historial de la muy noble y muy leal Provincia de Guipúzcoa*-ren barnean, Lope Isasti lezoarrak 86 errefrau kokatu zituen alfabetikoki antolaturik, gaztelerazko itzulpenarekin.[63] Suge,

---

59. Azkuez geroz *bezuza* ‘regalo’ izen gisa erabili izan da, baina ez dirudi hitz eta adiera horrek *RS*eko pasarteaz kanpoko oinarririk duenik: *bez* laguntzaile bezala hainbat aldiz agertzen da *RS*en eta baita *vza* ‘ahuyentar’ ere.

60. Azkuek ez zuen hiztegian sartu eta «*igerri, egerri, igarri* (¿)» zuzendu nahi izan zuen; alabaina, *RS*en 3 *uler(tu)* eta *ulerzalla* bat dira, eta *igerri*-rik ez, hori ekialderagoko aldaera baita. / Igûî / lau aldiz agertzen da, beti ere inongo dieresirik gabe (132 *ygui*, 3-493-494 *yguy*) garaiko grafian ohi bezala: cf. Laz. < biguelea > (/bigwelea/) eta beste.

61. Urkixok eta ondoko gehienek /ekarria/ irakurri dute erdal itzulpenari lotuaz, baina <q> x <gu> hutsa ez da batere erraza justifikatzen eta bai, aldiz, <gua> grafia /ga/-rentzat (nahiz <gue, gui> eta <ga, go> arruntagoak izan). Bestalde, bistakoa da *lectio difficilior* honekin errefrauaren zentzua hobetu egiten dela, «zentzun galdua berriz ez berreskuratzea» onargarriagoa baita «zentzun prestatua edo kanpotik hartua» ezin baliatze edo barneratzea baino. Azkenik, *egari* nahiz *egarri* arruntak dira ekialdean esanahi horrekin eta baita ‘jasan, pairatu’rekin ere Etxeparez geroztik; Mendebaldean hapaxa eta arkaismo aipagarria dugu.

62. *RS*ek euskal testu tradizioan duen pisuak (→ Larramendi → Azkue) ekar lezake inoiz *OEH* bera ere guztiz desbideratzea. Hori da, gure ustez, *aztu* ‘adivino’-rekin gertatzen dena *RS* 415 *Aztua eztan zarra aztidila* «El viejo que no es adivino que sea olvidado» oinarri hartuaz. Lehen hutsa *RS*eko euskara-erdara itzultzailearena da *az-tidila* moztu eta ‘olvidado’ ulertzean: *RS*eko gainerako *guztietan* bezala, *azti-dila* da mozketa zilegi bakarra, (10 *di-* / 0 *didi-* baitira bilduman) eta itzulpen zuzenagoa «El viejo que no es olvidado que sea adivino» non ‘adivino’ = *azti* ez *aztu*. Bigarrena euskalariena (tartean Lakarra 1996ko edizioko oharra): ez da *-i* : *-u* alternatzia morfologiko ez fonologikorik (ezin da nahasi *ule* / *ile* eta gainerako *u-* : *i-* urriekin; bidenabar, hauetarik gehienak **eu* batetik datoz). Bn ere badira *azti*ak eta *aztu* guztiek Azkueren bidez Larramendiren *Eranskin*-aren eta *RS*en zordun dirudite.

63. «porque se entienda que cualquier cosa se puede escribir y leer en esta lengua, sin mudar caracteres, con facilidad»; hor ematen dizkigu Miguel Suescun lizentziatuaren zortziko bat eta *Salbea* ere.

hartz, inurri, ahuntz, uso, ardi eta —bereziki—, otsoak ugariago dira gizakiak baino, fabula-aire markatua emanaz garaiko euskarazko bildumen artean. Badira, halere, artzai, harotz eta marinelak, etxe, eliza eta apaizez landa. Errefrau unimenbre eta bimenbre errima gabeko asko du (24/86 eta 36/86), Garibairenetan eta *RS*en baino arrunt haboro. Esan ohi denez, «sententziak» ia elementu prosodikorik gabekoak eta ezer gehitzen ez duten komunztaduren elipsi gehienekoak badira, horrelakoxeak lirateke Isastirenak.

Hizkuntzari dagokionez, Lezoko euskara hurbilago zen GNtik ezen ez Gtik, bereziki bi mende beranduagoko literatur Gtik: 2 *deño*, 3 *ichera*, 8 (17…) *du*, 10 (32…) *yche-*, 24 *icia*, 35 *faquea*, 54 *mesur gabeac*, 64 *auendoco*; gehi bekizkie Salbeko *dugu, laiduz, urricarizti, garaden*. Aditzean arkaismoak —aoristo sintetiko eta perifrastikoak, futuroak *-di-*rekin—, asko hain testu laburrerako: 21 *daquitzanean* (hegoak), 23 (eta 41) *daidi*, 24 *darrayonarenzat*, 26 *baledeco*, 28 *eztaquiala* ‘jakin’, 30 *ceguienac*, 44 *nesan*, 49 *inno*, 50 *aguin ceguian*, 81 *aserra citean, aguer citean*; gainera, ergatibo mugagabeak, hainbat predikatibo artikulu gabe, *bage* (nahiz *gabe* berri eta ekialdekoagoa ugariago), edo zenbait arkaismo lexiko: 10 *atean* ‘de fuera’, 18 *bildur*, 30 *abadea*, 61 *nobia* ‘nobio’. Ik. orain Reguero (2017)ren edizio eta iruzkina.

### *2.3.4. Zalgizeren errefrauak*

Oihenartek haren poesiagatik laudatu Zalgizeko Bertrand protestantearen 205 errefrau gorde zituen. Honen eskuizkribuen artean ziren Urkixok 1908-9an argitaratu arte; ondoren, Arzamendi-Azkaratek eta Sarasolak berrargitaratu eta aztertu zituzten (1983). Halere, bere testukritika arazo guztiak ez dira gainditu eta errefrau zenbaiten esanahia ere ez da erabat argitu. Aitzina liteke poxi bat, ordea: 98 *Cherri gorri hauerren, haraguia jaunen* ez da erabat ulertezina, gogoan izanik, esaterako, ingelesez egin bereizkuntza ezaguna ondare zaharreko / mailegatutako animalia izenetan, bizirik ala mahairako prestatuak izan.

Bilduma zaharretan Zalgizerena da jatorrizkotik errefrauen egitura erritmiko eta linguistikoan itxuraldaketa nabarmenenak dituena: 8 **Oilo ebildaria, acheriaren ianharia* → *O. e. achiariac jaten du*, 65 **Çamariac joan, establia cerra* → *Ç. j. direnian, e. c.* edo 44 *Hon bada venturaz, hon ezpada azturaz* (cf. Oih *Putasemea, hon bada*…).[64] Errefrauen animalizazioak fabula-airea ematen dio, Isastiren gradura iritsi ez arren: 11 *Otsoa artzain*, 31 *Ahatiari iguerican*…; baina gauzak haien izenez aipatzen badaki: 19 *Ezta eman hoin orori osqui gorri*, 21 *Gortia jaiquiz gueroz vilaüaren razoinac*.

---

64. Beharbada frogarik garbienetarik 196.a izan liteke: *Eliça eguin çuiana[c] aldaria*; cf. Isasti 30 *Eliza ceguienac aldarea, aldarea ceguienac, abadea*. Ohar bedi amaierako ezabaketaz landa, haren aoristo sintetikoa indikatiboko lehenaldi perifrastiko bihurtu dela.

Hizkuntzari denaz bezainbatean, gehienbat BNtzat du Orpustanek (1996) baina Sarasolak —egileak sortzezko euskalkiaren bereizgarriak estaltzeko borondatea zuela antzeman arren—, Oih baino Ztarrago kausitzen du, ez Bela adina, ordea: 5 bokaleko sistema darabil, baina *-e* + *-a* > *-ia* (*berciari, gortia*, etab.) eta < üa, ua > nahiz *-uia* du *-u* + *-a* topaketetan; hasperenean ere Zalgizerena Oih.ena baino ekialderagoko usadioa dugu: *hoin, hon/hun, hume* ~ *oin, on, ume*, datiboko komunztadura faltak Etxep eta BNkoetan ere aurkitzen dira, etab.[65]

### *2.3.5. Belaren errefrauak*

Egilearen *Tablettes* delakoetarik 45 errefrau bildu zituen Clément-Simonek XIX. mende akabuan. Egitura erritmikoa Zalgize eta Isastirenaren antzekoa da, unimenbre eta errima gabeko bimenbre askorekin; alabaina, Belak egitura sintaktiko gehiago ditu (42 *Orhico choria, Orhin laquet*; 43 *Otsoa nolaco, umia halaco*) eta beren silaba kopurua ere aski ezberdina da eta animalizazioaren estalkirako joera txikiagoa: cf. 16 *Dakoussanac goure beztia, eztaquique goure beharra;* 19 *Eliçatic hurranena, pharadusutic urrunena*; 20 *Emazte ederra bordeleco, guiçon ederra urkabeco* edo 39 *Nour da hire etsaya? Ene oficiocoa*. Zenbait enparatuko bildumetan ere izan arren, Belaren errefrauek interes berezia dute hizkeraren aldetik, Zalgizek eta Oihenartek estali Zren ezaugarri batzuk islatzen dituelarik: dialekto horretako 6. bokala, /ü/, sistematikoki <u>-ren bitartez, *au* > *ai, eu* > *ei* (*laida, lein*), *ore* posesiboa, gehi 4 *hugu*, 13 *chazco, ouhougnac, aurthencoen,* 18 *ussuric,* 19 *pharadusutic,* 21 *lekuya,* 22 *oilloer,* 23 *houn,* 24 *houretaric,* 26 *bercia,* 39 *nour*. Horrelatsu Peillenek (1996) gehitu errefrau dozenan ere: 3 *eroriala*, 4 *merkatura* [<k> = /kh/ (ik. § 2.5.1.7), cf. 16 *dakoussanac*, 20 *urkabeco*], 7 *eytzac houna*, 11 *nour, gaytzuruarequi*, 12 *saintiec*.[66]

### *2.3.6. Oihenarten errefrauak*

1657an argitaratu zen Parisen *Les proverbes basques recueillis par le sr d'Oihenart Plus les poesies basques du mesme auteur*. Zabaldu ez dirudi gehiegi zabaldu zenik —aurreko urtean 2. argitalpena izan zuen *Notitia utriusque Vasconiae*az oso bestela— zenbait adiskideri oparituetarik edo landa. Izan ere, egun gorde lau aleetarik hiru behintzat (Parisko BN, Baiona, Madril) egilearen zuzenketa interesgarriz hornituak aurkitzen

65. On litzateke Z modernoaren ezaugarriak betidanikotzat ez hartzea; gogora 1616-17ko gutunekin gertatua, batez ere Ros erronkariarrarenekin (cf. Lakarra 2014, 2016d).

66. <ou> / <u> bereizkuntza sistematikoa da: 3 *egur*, 4 *merkatura*, 5 *çoura*, 6 *çouretic*, 7 *houna*, 8 *hounguiric*, 9 *aztura*, 10 *noun*, 11 *nour, gaytzuruarequi*.

ditugu.[67] 1665ean Paben beste «Urhenkin» txiki bat atera zuen (538-706 errefrauak) eta bizitzan zehar biltzen jarraitu zuelarik, argitaragabe utzi zuen bilduma eskuizkribatu bat, ia Euskal Herri osoko 185 errefraurekin, 1967an Urkixoren paperetarik Mitxelenak argitaratua. Bilduma honetan dira Iruñean 1596an argitaratu *RS*eko 40 errefrau, erdiak Darmstadteko alearen bitartez lehenik ezagun eta besteak Iruñekoaren zati galduren batetik jasoak, Mitxelenak erakutsi zuen bezala.[68]

Urkixok euskal errefrau bilduma guztien originaltasun falta modu hertsiegian hartzean (cf. § 2.3.2.2 *RS*ez), izan da Oihenarten errefrauak ere itzulitzat hartu dituenik. Ez da oso egintzekoa bai berak hitzaurrean dioskunagatik —«txikitatik bildu eta orain inprimaturik ezagun izan daitezen»—[69] eta baita bertako hizkerarengatik ere:[70] lehen soa aski da ohartzeko garai hartako ekialdeko testuetakoa baino hizkera askoz zaharragoa dakarrela (batez ere aditzean), ez Etxepare eta Leizarragaren hainbat pasartetakoa baino berritzaileagoa, eta bereziki, bere poesia gehienetakoa baino arkaikoagoa.[71] Halaber, errefrauetan egin ukituek zenbait arkaismo ezabatu bide zuten.

Xarles Bidegainek erakutsi zuen (1993) Oztibarren —Oihenarten bizileku nagusian— ezagunak zirela oraindik % 10a edo; pentsatzekoa da Zuberoako lekukotasunak gehi Azkueren *Euskalerriaren Yakintza* bezalakoak erabiliaz portzentai horiek aski igo ahal direla. Alabaina, ikerketa hori peitu da eta hara begiratu arin batean aurkitu ditugunak *EY*n: Ztik kanpoko kideak dituzten zenbait: 254. *Jainkoa, luzakor bad'ere, ezta ahanzkor*-ek Zaraitzu eta Aezkoan baditu, 337. *Non fida, han gal*-ek BN-gar eta Zn, 341. *Nori berea da zuzenbidea*-k Baztan, L eta BNn, 371. *Orgâ xarrago eta karranka handiago*-k Ln. 405ekoak aldaera bat du BNn, 392. *Otsoaren ihesi nenbilela, bat nendin hartzareki*-k eta 396. *Pika nolako, umea halako*-k Zn… Bestalde, 139. *Eneko atxeka hi hartzari, nik*

67. Zorigaitzez, ez dirudi hauek guztiak testukritikak ikertu eta erabili dituenik; Aurelia Arkotxak ikusi du horien garrantzia abian den edizio eta azterketa batean.

68. Dakigunez, ez soilik errefrauak, poesiak eta kanta zaharrak ere ikertu eta bildu zituen, Andre Miliarena eta Bizkaiko amodiozko poesia lekuko; ik. 38. oh.

69. Lehenago, beste hizkuntzetan ere herri xehearengandik bilduari emandako garrantzia markatzen du aipatuki. Bestalde, 57. oharrean *RS*ren herrikoitasuna erakusteko erabilitako argudio lexikoek honentzat ere balio dute funtsean.

70. Ez zaio kasu handirik egin *atsotitz* neologismoari ere; ez dirudi hori asmatu zuenak egile atzerritarretarik itzultzeko grina handirik zuenik eta bai gainerako lurraldeetako (idatzizko eta ahozkoak) biltzeko, hitzaurrean dioskunez, aipatu Urkixo-Mitxelenak argitaratu bilduma eskuizkribatua lekuko.

71. Nahiz poesien eta errefrauen arteko aldea murriztu lehendabizikoetan errefrauetarik (eta ezagutzen zituen beste testu zaharretarik: *RS*, Etxep, Leiz…) atera osagaiak erabiltzean, hainbat aoristo, esaterako.

*demadan ihesari* eta 199 *Goiz gorriak dakarke uri, arrats gorriak eguraldi*-k esaterako, mendebalean ere kideak ditu; 2.aren azken zatiak baita GN eta Bn, 342. *Odolak su gabe diraki*-k Isasti eta *RS*en, etab.

Hizkera bera berme aski da Oihenarten errefrau gehienen herrikoitasunaren alde.[72] Oihenarten errefrauetako hizkeraz esan izan da BN (eta L) dela eta ez egilearen sorterriko Z. Baliteke hori izatea haren gogoa, hein batean bederen, eta hala dirudi axaleko hurbilketa batean: ez du, demagun, 6. bokala sistematikoki markatzen —baina zeinek Bela eta Belapeyre baino lehen? (ik. § 3.3.1)—, eta mendebalagoko anitz ezaugarri da lexiko eta aditzean. Alabaina, hor dira 208 *Handurreria, espada Tussuria, da hura iduria (Tussuria, diabruari erraten sioten euscara saharrean, eta orano hiz haur usazen da Suberoan*) bezalakoak, non beren benetako jatorria espresuki aitortzen —aldarrikatzen?— den. Gainera, Oihenartek seguruenik garaiko beste inork baino hobeto menderatu arren Iparraldeko (eta enparatuetako) hizkerak, isurtzen dira salaketa bera egiten duten ezaugarriak: 1 *behincoas vken-tut*, 6 *Nafarroa garaico eta Suberoaco mugan*, 10 *ohonac*, 17 *escontu*, 26 *hontara*, 54 *aiduru*, 74 *saltunac*, 75 *-ti*, 84-175 *hunqui*, 115 *oboro*, 131 *hanti*, 137 *hontaric*, *heben*, 145 (eta 366, 373, etab.) *hantic*, 184 *gauherdirano*, 197 *laketguia*, 213 *egunco, xasco* (id 478-480, etab), 220 *gurentu*, 233 *higu*, 254 *ahalcor*, 301 *xas*, 421 *xuxentu, askentu*, 470 *exen*, 531 *berzentaco*, etab.[73] Ez da erraz aurkitzen hainbeste ezaugarri zuberotar duen lehenagoko edo garai bereko lekukotasunik; ik., orobat, 160. oharrean Mitxelenaren gogoetak azentuaz eta *-a*-z amaitu hitzez.

## 2.4. Poesia idatzia

### *2.4.1. Etxepare*

Sarrasketan, Donibane Garazi ondoan, jaio (c.1475) eta 1518az geroz handik gertu, Eiheralarren erretore izan, Donibanen bertan apaiz aritu eta 1559 ondoren hil zen.[74] 1545ean Bordelen argitaratu *Linguae Vasconum Primitiae*, lehen euskal liburuaren ale bakarra Parisko Biblioteka Nazionalean gorde da.[75] Bestelako arazo filologikoek bai baina

72. Segurki, horren alde litzateke aspalditik aipatu Bela eta Zalgizerekiko zorra ere (ez baita horiei buruz itzulpen-susmorik) eta, bereziki, gorago aipatu argitaragabe geldituak bilduma.

73. Bidenabar, dialekto modernoen egoeraren galbahea ezarri ohi da gehienetan (oker) testu honen eta beste askoren hizkera sailkatzerakoan; ik. 13 eta 44. oharrak.

74. Haren bizitzaz (Mosen Bernaten Kantuian aipatu kartzelaldia barne), ustezko Espainiako Erregearen alderdiarekiko isuriaz eta gainerakoez susmo eta aieru gehiago da, datu seguruak baino; liburua Bordelen argitaratzea eta ez Hegoaldean ez da beti gogoetagai horien artean kokatu (ik. Arkotxa 2008).

75. Bigarrena, Santxo Elsokoaren dotrina euskaraz eta gaztelaniaz zen, baina ez da alerik gorde

ez dirudi aztertzaileei erabilitako hizkerak galdera larririk sortu dienik Leizarragaren itzulpenek bezala. Isastik hurrengo mendearen ia 2. laurdenean haren berri izan arren,[76] Pouvreauk ez bide zuen erabili bere hiztegian —bai Leizarraga, Materre, Beriain, Etxeberri Ziburukoa, Axular, Oihenart (cf. Etxagibel 2014)—, ezta Larramendik ere berean (eta gogora honen hitzaurrearen garrantzia euskal literaturaren historiografian). Ez zuen, beraz, eraginik izan euskal literaturan eta ezta euskara idatziaren historian oso berandu arte. Francisque Michelek Parisen aurkitu[77] ondoren xix. mendearen 2. zatiko atzerriko euskalarien ikergai garrantzitsuenetarik bilakatu zen: lau argitalpen (Brunet-Arxu, Vinson-Hovelacque, van Eys eta Vinson-Stempf, azken honena glosario eta guzti), tartean Arxuren frantsesezko itzulpen bat ere bai, ez beti egokiegia. xx. mendean Urkixok *RIEV*en emandako facsimila izan zen eraginkorrena ikerketan eta beste edozein testu zaharrek baino argitalpen eta itzulpen gehiago izan du azken hamarkadetan; 1980an Altunak argitaratu zuen edizio kritiko bikaina (Lafonen eta gainerakoen ekarpenak ere bilduaz), egilearen poesiazko eta metrikazko tesi batez eta testu osoaren hiztegia gehituaz; ez dirudi, ordea, oraindik guztia esana denik ez egileaz eta ezta testuaz ere (cf. Arkotxaren lanak, adib.).

LVPren testuak 1159 bertso-lerro ditu 28 foliotan eta 31 lerro hizlauz Bernard Lehete mezenasari egindako eskeintza-hitzaurrean: Eskeintzazko gutuna (31 lerro), bi poema erlijiozko (595), hamar amodiozko (403), Mosen Bernat Etxepareren kantuia (102), Kontrapasa eta Sautrela (40 + 19).

Garaiak eskatu bezala, hainbat aditz sintetiko, aoristoak, baldintza irreal arkaikoak, subjuntibo trinkoak, optatiboak eta preskriptiboak, *l-* mendeko perpausetan, Linschmann-Aresti legea… aurki litezke bere testuan (cf. § 3.5) eta ez da frogatu Leizarragaren hizkuntza arkaikoagoa denik ezaugarri hauei dagokienez inoiz esan

(proposatu da zatiren batzuk baietz baina segurtasunik gabe; cf. *ConTAV*). Oihenartek *L'art poétique basque*n (1665), Etxep-ren poesia gogokoegi ez zuela erakusteaz landa, —neurri eta gaietan herrikoiegi edo baldarregi harentzat—, haren liburuak Erroanen XVII.aren hasieran 2. argitalpen bat ere izan zuela dio.

76. Isastiren bertso eskutadak ez dirudi 1545ekoa aurrean zuelarik emana, eta 2. edizioa ez bide zuen ezagutzen, Etxep-ren liburua «aspaldikotzat» baitu. Haren beste bertso batzuen eta Aita Donostiak bildu otoitz herrikoi zenbaiten artean Lafonek markatu zituen kidetasun edo loturak azaltzeko modu bakarra ez da horiek gure egilearen iturritzat hartzea, honen poema zenbait herrikoitzearen aukera ere hor baita; aukera honek lagunduko luke Isastiren aipuaren eta originalaren arteko jauzia ulertzen ere.

77. Horra Nafarroako Erreginaren inguruko eta Frantziako protestanteen buru zen Condé-ren bitartez iritsi zen (cf. Arkotxa 2008); horrenbestez, beharrezko da Leizarraga eta Etxepareren lanak batera aztertzea (cf. Arkotxa & Lakarra 2015). Ezaguna da ere Margarita Nafarroakoaren erasmismoa eta badirudi Etxepareren liburuko zenbait pasarte eta bizitzako gertakari batzuk ideia horien eta antzeko erreformisten eraginaren aldetik ulertu behar direla (*pace* Aldekoa).

denaren aurka. Bokalismoan, aldiz, Ltik ekialderagoko hizkera baterako itxaron zitekeen moduan, *-e + -a > -ia, -u + -e > -uie, -u + -a > -uia* ditu —behin baita *-a + -a > -ara* ere, Zar modernoan bezala— eta baita monoptongazioak aditzean (*au > u, ai > i*), gehi *dira* → *zira, gira* edo *zaut* nahiz zukako alokutiboa (edo datibo komunztadura falta) Leizarragak ez bezala, usadio nagusian bederen. Grafian (ik. § 3.1) Leizarragarekiko aldeaz jabetzeko aski izan bedi ohartzea ez dituela txistukari frikariak eta afrikatuak sistematikoki bereizten (*izterbegui, çeren, escapaceric, gayzeriztez, baçu, cinhexi*) eta hasperen herskariak markatzeko <pph>, <th> eta <qh>/<cc> darabiltzala; belare hasperengabeetan ere ez da <k>rik, ohiko <c>/<qu> baizik.

Haren bi helburu nagusiak ditugu euskara inprimategiaren bitartez «aitzinerat augmenta, kontinua eta publika [dadin] mundu guzietara» eta «baskoek,[78] berzek bezala, duten bere lengoajian eskribuz zerbait doktrina eta plazer hartzeko, solaz egiteko, kantatzeko eta denbora iragaiteko materia» (Eskaintza 22-28). Lafittek eta bestek harriduraz aipatu amodiozko gordinkeria gehiegizkoak gora-behera, ez zuen xx. mendearen erdialdera arte edo balioespen handirik erdietsi, baina Gil Reicherrek eta Lafonek beharbada lehen euskal poeta handiena ere izan zitekeela aldarrikatu zuten.

Gainetik, Oihartzabalek (2007) erakutsi zuenez, Hitako Artziprestearekiko konparaketa ukroniko errazegiak estali du Errenazimentuko poeta. Orobat, bai euskara letren munduan inprimategiaren bidez jarri nahiak eta Okzitania eta Frantziako poetekiko paralelismoek ere bestelako hurbilketa bat beharrezko egiten zuten. Lehete eta haren bitartez Collège de Guyenne eta Bordeleko literato eta humanistekiko erlazioak (cf. Arkotxa 2008, Arkotxa & Lakarra 2015) argi erakusten dute kulturalki Etxepare ez zela iragan urruneko Espainiarantz begira; nabarmena da literatur historiografiaren anakronismoa, garaiaren funtsezko ezezagutzatik datorrena.[79]

---

78. Mitxelenak erakutsi bezala, hitz hau —Mogelek horrela darabil xix. mendearen aren hasieran— ez zen *euskaldun*en sinonimo, «6. merindadeko nafar» adierako baizik. Erromantzez «vasco» eta «tierra de vascos» xix. mendera arte ez zaie Hegoaldeko hiru lurraldeetako biztanleei ezartzen, *vizcaíno* edo v/*bascongado* baizik (hau, bidenabar, edozein euskalduni: Larramendik «muy buen vascongado»-tzat zuen Leiz). «Vasco» Hegoaldekoei xix.aren amaieran edo xx.aren hasieran ezartzen zaie; *vascongado*k hizkuntzarekin lotutako adiera gorde zuen gero ere.

79. Ezinutzizkoa da oraindik Ernest Gaullieur, *Histoire du Collège de Guyenne*, Paris 1874, non garbi gelditzen den hirian ikastetxeak—*Linguae Vasconum Primitiae* argitaratu baino lehenagotik— zuen berritzaile-fama; ez bide da halabehar hutsa 1535-36an hor Mathurin Cordier «Calvinoren eskolamaisua» irakasle izana. Parisen aritu zen bostpasei ikastetxetan lehenik, eta Bordelez geroz Ginebran, bere aspaldiko ikasleak hara deiturik. Montaignek dioskunez «Le bonhomme m'envoya, environ mes six ans, au Collège de Guienne, très florissant pour lors et le meilleur de France»; erreferentzia LVP aurreko laupabost urteei dagokie (cf. Arkotxa & Lakarra 2015).

Eztabaidatu izan da 1545ekoa baino lehenagoko argitalpenik izan ote zen Etxepareren baimen eskariko pasarte batean bere argitalpenaz kanpokoren alerik saltzen ez uzteko eskatzen baita. Arazo filologikoen artean pisuzkoago dirudi Lafonek aipatu *LVP*ren bi idaztaldiek emandakoak: gorputz nagusia —erlijiozko bertsoak, amodiozkoak eta «B.E.ren Kantuia»— osatuko zen lehenik eta gero —ohi bezala eta logikak eskatzen duen legez— hitzaurre-eskeintza gehi amaierako bi koplak euskara moldezko letretara sortu berriaren ohoretan. Bestela ere egiantzeko den ideia honen alde grafiazko eta hizkuntzazko xehetasunak bildu zituen Lafonek:

-Bizkarkari afrikatua adierazteko <tz> grafia aipatu zati berrienetan ageri da soilik;
-Gainerako testuetan <y> nonahi datorrelarik (silabagune nahiz diptongoaren 2. osagai), zati berrienetan soilik diptongo akabua markatzeko dator;
-Zati zaharretan *gabe*; berrietan *bage*;
-NNZeko laguntzailea *deraut* edo *daraut* erakoak darabiltza baina Lafonek *darauritzut* (cf. Ariztimuño 2016) Eskeintzan eta *dio* Kontrapasean aurkitzen ditu;
-NN-eko laguntzaileak gehienetan *zait* erakoak dira zati zaharrean eta berrian *bazautza* bat aurkitu da; alabaina, bakarra oso froga sendoa ez izateaz landa, inoiz bada *zaut* analogikoa ere zati zaharrean.

Alabaina, horietako zenbait (<tz> bereziki) inprentako ohitura zabalduenek azal ditzakete eta besteren batzuk (*bage, dio*) ez dira oso esanguratsuak arkaismoak edo orokorrak izanik; nolanahi ere, ez da zer pentsatu Lehetek ez zuela erabili Etxeparek berak emandako eskua —*hayec* [igortzen dizkion koplak] *iqhussiric eta corregituric plazer duçun beçala irudi baçautzu imprimi eraci diçaçun*—, batez ere egilea bera *in situ* ez zelarik inprimategira azken iritsi zatien probak zuzentzeko.[80]

### *2.4.2. Joan Perez Lazarraga*

#### 2.4.2.1. Koadernoa

2004ko otsailean aurkeztu zuen haren jabe berriak (Gipuzkoako Diputazioak) Borja Aginagaldek aurkitu Joan Perez Lazarragakoaren eskuizkribu bat; berehala erakunde berak sarean jarri zuen zaletuen esku. Seguruenik, aurkitutako lekukotasun garrantzitsuena dugu, Landucciren argitalpenaz (1958) geroztik.

80. *Eta çure escutic oroc dugun ioya ederra Imprimituric heuscara orano içan eztena eta çure hatse honetatic dadin aitzinerat…* jarraitzen du; ohar bekio birritan errepikatzen den *çure* horri. Hitzaurrearen amaieran ere ondoko euskaltzaleek Leheterekiko izango duten zorra goraipatzen da.

Haren garrantzia bezala, eskuizkribuaren zailtasunak ere askotarikoak dira, ordea: egiletasuna, datazioa, testuen egitura eta banaketa, ordena, eskuizkribuaren egoera, zuzenketen egiletasuna, irakurketa, puntuazioa eta enparatuak… Halere, aurkezpenetik lau hilabete igaro baino lehen, salgai zen *Dianea eta Koplak. Joan Perez de Lazarraga Madrid 1567* deitu «edizio literario» bat («transkripzio modernoan», gainera), beharbada edozein euskal lekukotasunek funtzionari publiko baten eskutan inoiz pairatu sarraskirik larrienetarikoa; testua hondatzeaz landa, hura ez argitu eta ez ulertu ere hainbat zatitan, eta inorentzat ez diren ohar inozoz (*amatzen* 'maitatzen', etab.) hornitu eta haren ezagutzan aitzinatzeko inongo urratsik eman ez zuena.[81]

Ondokoa nahi adina erraxki luza litekeen testuaren aurkako bertako bidegabekerien antologia llaburra besterik ez da:

> ballaco → balako; eseco → etxeko; isiric → itxirik; gax → gax; gañean → gainean; ceña → zeina; (zeure aoan dozu agiri /) an ez dozuna freurik → an ez dozuna deusik; bila ze zatez besterik → bilatze zatez b.;
>
> leutsala → zeutsala; lotu eben guidaletan → l.e. gibeletan; usteztidin odoletan → ustez zidin o.; koplarik ondo ordenaeta[n] / abilidade badozu → koplari o. ordenadua…; razonamentu dulce oa → r. dultzea; nai egion nik aren kontra / oi ez nedukan gerrarik → oi ez nedukan getxarik (sic); elzaenzako flakezia → elkaenkako (sic) f.; ofrendara dianea[n] / ondo oi det miratu / sagara gora dianean / amore lindeaz oroitu → Ofrendara Dianea…; ar[r]en aguir zaitez / zakuskedan leiotik → Aren ajun ['*Ajun? Gerturatu?*'] zaitez; San Juºen aurrea[n] → an Judioen aurka; erri onetan bestek ezteu → etxi o.; bularteria[n] trapua zuri → b. trajea z.; etab.
>
> al dozu → galdera (benetan desideratiboa); gaitirren «sic, gaitz erran» ('gaitik ere'); ezpazeontza 'ez bazenu ezagutuko, jakingo' ('ez bazeunde');

---

81. «Testukritikako» nahiz «Filologiako» eskulibururen bat irakur dezana erraxki ohartuko da edizioak lekukotasunen testuak hobetzeko eta horien segurtasuna bermatzeko egin ohi direla herri zibilizatuetan; bestelako helburuak izan ezkero logikoena testu horretako figurak edo ideologia edo antzeko gai sakon eta bizi-bizi bat aztertzea bide da hoberena… nahiz eta zenbait kasu ezagunetan begien aurrean duena ulertzeko —eta usu zuzen irakurtzeko ere— gai ez izan. Cf. «Un editor tiene derecho a equivocarse en la *selectio* y en la *emendatio*, pero una deficiente *collatio*, un texto con errores y un aparato crítico defectuoso hacen inservible una labor penosa, larga y, en general, con no demasiadas satisfacciones. Y aunque no es probable que haya un círculo infernal especialmente dedicado a los malos filólogos ni nos conmuevan demasiado los consejos de Orentius, parece evidente que una edición crítica descuidada sólo sirve para perder el tiempo a quien la hace y a quien la padece» (Blecua 1983: 132).

xvi. mendearen akabuko eta xvii. mendearen hasierako kuaderno bat dugu (egilea bera 1548an edo sortu eta 1605ean hila):[82] bi estalki eta 59 orri ditu egun, horietarik lehen lauak, gehi barnean beste 9 eta akabuko estalkia hautsiak. Hiru zenbakuntza ezberdin dira eskuizkribuan eta zaharrenaren arabera beste 16 orri falta ditu hura ezarri zitzaionetik. Zenbakuntza hori *1139*an hasten denez, eskuizkribua bilduma nagusiago baten zati zen; ez jakin, ordea, zer zen aurretik edo ondotik eta ezta enparatuko orrialde horien egilea(k) nor z(ir)en ere.[83]

Kuadernoan bi parte dira: guztiaren herena edo hartzen duen artzain nobela puxka llaburra —hasiera eta amaiera falta ditu— eta 46 poema, 37 euskaraz eta 9 gaztelaniaz. Artzain nobelaren gaia, ezinbestean, garai hartan hedaturiko amodio nahasiekiko istorioena dugu; bertsotan gaiak eta neurriak askotarikoak dira, maitasunarena nagusi, baina baita erlijiozkoak, narrazioak edo isekazkoak ere. Artzain liburua, erdal ereduren batetik itzulia edo moldatua izan liteke haren sintaxi eta lexikoa begiratuaz (ik. Gómez 2011ako adibide ugariak); gaztelaniazko poemetariko zenbaitek egile edo iturri ezaguna du eta euskarazko batzuek itzulpenak dira argiro; beste zenbait, egitura herrikoiagatik zein gaiagatik («Salbaterrako erreketa» edo autobiografikoak) originalak.[84] Badirudi, Joan Perezek koaderno horretan jatorri eta garapen gradu ezberdineko lanak bildu zituela bizitzaren ia akaburaino.[85]

Eskuizkribuan badira zenbait data («Salbaterrako Erreketa»-n *1564* edo «aide andioc bidaldu deustae»-n *1567*) eta baita gertakari historiko datagarrien aipuak ere («Denpora baten içan ninçan…»-en) baina poemok ez dira ezinbestean orduan bertan eginak eta are gutxiago data horietan kuadernora bilduak. *Monumenta linguae vasconum*-eko edizioan (Bilbao *et al.* 2010) hirutan banatu da eskuizkribuaren edukina:

A = testu nagusiak (artzain nobelarenak zein poesienak),

82. Testu literario gehiago zabaltzen eta ezagutzen ziren Espainian eskuizkribaturik ezen ez inprimaturik xvii. mendea ondo sartu bitartean; beraz, ez da zer pentsatu, Lazarragaren koadernoa osorik (oraindik gordetzen duenarekin gehi segurtasun osoz galdu den gehiagorekin) imprimatzeko pentsatua zenik, baizik eta egileak bere baitatik edo besterenetik bildua gordetzeko. Hainbat zatiren garapena eta itxura ez da inprimategira edo inoren aurrera eramateko modukoa.

83. Joan Perez Lazarraga («el poeta») lehendik ere ezaguna zen bere kronikagatik baina, izengoitia gora behera, ez haren literatur lanengatik.

84. Koadernoaren akabuko bi orrietan Estibalizko Sasiolakoaren poema batzuk datoz, gainerakotik grafiaz zein hizkuntzaz bereziak; ik. Mounole (2015b).

85. «Obian datzan amari» dio «Mari Lopezco ederreza» poeman; ama hori Laz-rena bada 1602. urtea baino geroago idatzia behar du, orduan hil baitzen.

B = ertzetan, trabesera edo Aren gorputz arruntetik kanpo (usu tartean) geroago idatziak eta

C = hitz, monograma, errubrika eta gainerako testu txiki sekundarioak.

2.4.2.2. Lazarragaren hizkeraz

Lehenago Mitxelenak Landucciren A eskuarekin legez (cf. § 2.6.5) garbi asko ikusten da Lazarragak ordezkatu hizkera[86] ez datorrela bat Bonaparteren mapetakoekin, ezta xv-xvietako gainerako lekukotasunekin ere, Landuccirenaz landa: *-ain* / *-uin* (*gañean, muñ*) gordetzen du Bzko *-an* / *-un*-en aurka, *cundicio* edo *gumutatu* atzeranzko bokal ixtea ere badu hark ez bezala eta baita hainbat ezberdintasun hitz barneko (*aldarea*) zein —batez ere— hasierako kontsonantismoan: *pulzatu, temporea, gatea, quilça, beaça, barcacio, castaetan, fortiz, pilox, tenda*, etab. (cf. § 3.2.2.4).[87]

Landuccirengan islatu morfologia urrian antzeman zitekeena hemen argiro ikus genezake: *oa* (*berba oa* / *neguianean aditu*) eta *ar-* du 3. graduko erakuslean (*arc, artan, artatic, artaco, arereanic* [cf. Bz *arean*]…), ez *a-*; *guek* izenordaina, *-r* gordetzen du oraindik *neurk, neurgaz, eurk, zeur, zeurgainik*, eta enparatuetan (Bz ez da honelako alerik baina bai baten bat Gz eta Lz)[88] edo *zeurok* eta *zeuren* Bz lekukotzen ez direnak. Izenaren morfologian *-gaz* soziatiboan eta baita *-rean(ik)* ablatiboan izan arren, ezaugarri horiek ez ziren B eta Arabako berrikuntza esklusiboak, (GZean ere arrastoak dira) eta *-kin* nahiz sing. nahiz pl. zein mugagabean darabil, berriro ere Bko usadioan ez bezala.

Aditzean *egin* eta **ezan* laguntzaile *irrealis* iragankorrak darabiltza, baina hori bera da B arkaikoan ez eze (nahiz hor eskasago izan) GZn ere dakusaguna (cf. § 3.4.3). Laguntzaileetarik atera gabe, badira ezberdintasun markagarriak Lazarragaren usadioa eta B arkaikoaren artean: lehenik *jagin* eta *jakin*, ezezagunak hor eta gainerako lekukotasunetan (salbu Ulibarrik argitaratu Aiara aldeko xviii. mendearen akabukoetan): A28:166 *Jaun Cerucoac / çuri bidaldu jaguinic; / adietaco badeçu miramenturic, /*

86. Ez ditugu kontuan hartzen hemen Sasiolakoarenak, Bicuñarena eta enparatuko txikiren bat (eskuizkribu osoaren % 2-3 edo).

87. Mitxelenaren ustez Landuccik ez zuen bokal sudurkaririk eta Lazarragak ere ez ditu markatzen baina hori ez litzateke ezertarako argudio *RS* eta mendebaleko gainerako lekukotasun gehienetan ikusten dugunaren arabera (ik. § 3.2.1.3), batez ere K. Ulibarrik bere tesian (2015) Aiara inguruko testuetan xviii. mendearen azken bi hamarkadetako sermoietan horien lekukotasunak aurkitu eta gero.

88. Bitxia da 1.200 edo 1.300 urte lehenagoko omen liratekeen Arabako Veleiako idazkietan *neu, zeu* (ez *eu*!) eta horien kiderik abondo izan arren, *-r* hori behin ere ez lekukotzea; ik. § 3.3.2 garaiko adibide gehiagotarako eta oraindik badira xvii eta xviii. mendeetan ere, nahiz Ipar, nahiz Hego.

*ez consentidu / ceure lurrean gaxtoric*, B14:15 *Aren aoti berba oa / neguianean aditu, / reberencia* jaguiteco / *belaunoc neben incadu*, AL1142v *Donzellea, cegati çaoz / enegaz enojaduric, / çurequin ene aitasuna / horrela anci* jaquinic?, 1145v *Esperancea galdu* jaquinic / *bici çan, aseguin bague*.

Lekukotasun berriak gordetzen zuen ezusteko ederrik: **eradutsi* Dat.Lag: A24:11-2 *eragocico* deraustae / *damaoc servietea*, AL1145v *Cegaiti lauoi bardin on erechi / ez* derausteçu *euren amoreetan*, A27:5-6 *Oy aserratu* deraustaçu, / *ceurorrec ala guraric*; gogora ekialdeko **eradun* eta GZko *-irau-*. DAT hauei *deu-* formak eta Btik landara orokor ziren *di-, zi-* ere gehitu behar zaizkie: A25:55 *az chiquirra vioçagaz emun* deuso *escuetan* baina A27a:9-12 *berva gureac / ez* diçu *emun lecuric*, A7:71-4 *itaundu* nagon *poridadean / beste donzella bateri / nola ereiçun ceure icenaz; / erançun* cidan: *Catalin*; are gehiago, hor da A24:17-8 *ez* jagot *joco / laztanai biguelea* aipatu berri dugun *itandu nagon*-ez landa.

Sintaxian, Arabako gainerako lekukotasun garrantzitsuenek legez (Land., Albeiz, Gamiz) OBJ.PLareko komunztadura falta dugu, salbuespena inoiz **edun* delarik: A13:1 *barri onac dacart*, AL1151r *esan dogun bervaoc ençun eguianean* baina A16:93 *conjuraetan çaitut laztan* nahiz A16:90-2 *mantenicen dau / guztiac aci artean*. Honelakoak (cf. Lakarra 1986b) B eta G-z ez dira lekukotzen 1700 b.l. eta gero soilik hegoaldean Ako euskararekin mugakide diren ertz batzuetan; Lazarragaren gainerako ezaugarrietarako ik. Lakarra (2004), Mounole (2015b) eta hemen § 3.

## 2.5. Prosa

### *2.5.1. Leizarraga*

#### 2.5.1.1. Deskribapena

Suomieraz Agricolaren lanekin bezalatsu (cf. Sauvageot 1973: 95 eta § 2.5.1.3en hasiera) 1400-1600 bitarteko euskarazko lekukotasunen zati nagusia (5etik 4 edo) dugu Joanes Leizarragaren *Iesus Christ gure iaunaren Testamentu Berria* eta honi erantsi *Kalendrera, Bazco noiz daten, ilhargui berriaren eta letra dominicalaren eçagutzeco manerarequin* eta *ABC edo Christinoen instructionea othoitz eguiteco formarequin* (568 f., 16 or., 99 f.). Erreginaren armekin eta «fort bien imprimés» argitaratu ziren Errotxelan 1571an, Hautin-en etxe ospetsuan. Vinsonek markatu zuen dagoeneko obra nagusiaren eta txiki bien arteko hizkeraren aldetiko ezberdintasun esanguratsua, baita horren zioei buruzko hipotesi garrantzitsu bezain gutxi aipatua ere:

> La particularité linguistique qu'offre ce petit volume — les datifs en *èr* — indique qu'il était destiné uniquement à la Basse-Navarre et à la Soule, c'est-à-dire au pays basque soumis à Jeanne d'Albret. En a-t-il été fait un autre tirage, avec les datifs en *ei*, pour le pays basque de l'obéissance du roi de France ? Je ne le pense pas. Ici, où

> aucun culte public ne pouvait être organisé et où aucun culte privé n'était permis, le Nouveau Testament, livre de lecture domestique, suffisait et c'est même évidemment pour cette région spéciale qu'on avait fait des exemplaires sans les prières ecclésiastiques et le catéchisme. En revanche, le *Kalendrera* et *l'A B C* ont dû être largement répandus en Basse-Navarre et en Soule ; aussi y ont-ils dû être recherchés et détruits, lors de la réaction sous Louis XIII, avec plus de fureur encore que le Nouveau Testament.[89]

Orotan ziren zatiak erkatuaz TBko *dirade-* (*diradela, baitirade*…), *baicarade, baiquinaden, -endaco* bestean *dira* (*direla, baitira*…), *baicara, baiquinen, -ençat* (3 aldiz) aldatuak aurkitu zituen; horrezaz landa, *Kalendreran* zenbait zuzenketa egin ziren TBko testuaren gainean —puntuazio eta azentuetan, esaterako— eta testua hobetu zen.[90]

#### 2.5.1.2. Filologia arazoez

Lafonek (1943: 54) dioen legez, Leizarragaren testuak erabili nahi dituen hizkuntzalariak bi galdera nagusi behar ditu ihardetsi: zein den hark itzulitako testua eta zein hizkeratara itzuli zuen edo zeri dagokion dialektalki haren hizkerak.

Lafonek eta beste hainbatek funtsean TB protestante frantsesen bat itzuli zuela mantendu arren, Vulgata eta grekerazko testua ere erabili zituela zioten. Ruiz Arzalluzek (1991) erakutsi zuen grekerazko originalaren egiantzekotasun urria; izan ere, horrelako batetortzerik denean itzulpen frantsesa da edo Vulgata dagoeneko grekerarekin doana.[91] Urrats bat aurrerago, Salaberri Muñoak (2010) agertu du susmoa ezta Vulgatarik ere, original frantsesa erabili zuela soil-soilik. Original frantses hori zehatz zein zen ez da garbitu eta ez da egiteko erraza: Pierre Robert «Olivetan»-en TBak 1536an lehenengoz argitaratu zenetik 1588ko onarpen ofiziala lortu bitartean (eta gero ere noizbehinka) ia urtero aldaketak zituen;[92] azken ikerketek 1562-63ko edizioren baterantz hurbiltzen gaituzte.

---

89. Lacombek eta Dodgsonek ere (cf. Lafon 1943: 49) *diroano* / *deçaqueano* eta *diotso* / *diotsa* aurkitu zuten TBn bertan. Gehi bedi § 2.6.3n aipatu eta arestian B. Urgellek argitaratu Zko Leiz-ren hiztegi esanguratsua ere.

90. 1907an Vinsonek 26 ale ezagutzen zituen; bat (Leidengoa) Joana Albreteko Erreginaren opariz.

91. Ezin interesgarriago Agricolaren kasua: grekera (eta are hebraiera poxi bat) jakin arren, suomierazko TBren itzulpenean inoiz ere ez zuen erabili eta Vulgatatik aldentzen denean beti suedierazko edo inoiz alemanierazkoarekin doa (Sauvageot 1973); ik. hurrengo atala.

92. Arrakastarik izatekotan, etorkizunean zuzenketak eta pasarte zailentzako oharrak erdietsiko zituela uste (eta nahi) zuen: «badaquigu ecen denborarequin anhitz hitz eta minçatzeco manera eridenen dela obra hunetan bercela hobequi erran çatenic : halacoetan, gauçá ceren den daquitenetaric batbedera, orhoituren da, othoi, ecen hunelaco gauçác, guciz lengoage

ABCren originalarekin antzera; Calvinoren katiximarekin batera atera ohi baitziren eta Salaberri Muñoak dioen legez *Abc* izeneko liburu kristau horiek uste baino edizio gehiago izan zuten urteetan barrena eta edizioak antzekoak ziren baina ez berdin-berdinak. Hortik, nonbait, Leizarragaren antzeko izenburukorik eta egiturakorik aurkitzea, baina ez eduki berekorik (2010b: 112-3).[93] Calvinoren teologia erreformatuaren bilduma den *Institutio christianae religionis* liburuan garatzen diren puntu larrien ildokotzat har daiteke edukiari dagokionez, handik jasoa, xurgatua edo laburtua; hots, ez ziurrenik sortua, moldatu-itzulia baizik.

### 2.5.1.3. Agricola eta Leizarraga

Gehienik famatu duen TBaren suomierazko lehen itzulpenaz (1548) landa, Agricolarenak dira Bibliako zati hautatuz eta otoitzez osatutako bilduma bat (1544), Bataioaz eta liturgiaren beste alderdi zenbaitez beste bat (1549), Azken afariaz eta mezaz (1549), Kristoren pasioaz (1549), Dabiden salmoez (1551), etab., 1543koa izan litekeen ABC bat tarteko (Sauvageot 1973: 95). Bere lanetan San Jeronimoz geroztik *simplex translatio* deritzon itzulpen ahalik eta literalena zuen Agricolak helburu, sekta ezberdinetako misionistek ohi bezala. Literaltasun hau haien itzulpenetan esaldi ulertezinak osatzerainokoa da, hainbestekoa baita prozedura horren garrantzia misio-hizkeran (cf. Sauvageot 1973: 149). Gertakari honek Agricolaren hizkeran eragin guztiz markatua zuen: suomieraz ohi baino arrunt gehiago zerabiltzan izenordain erlatiboak, zenbait egituratan originalarekiko morrontza erabatekoz, «mendebaleko airea» emanaz testuari, eta erlatiboen bitartez ordezkatuaz originaleko partizipioak.[94] Pasiba ugariek ere arazoak eman zizkioten suomierak puntu honetan zuen hutsuneagatik; horientzako eskura zuena (3.p.s.) darabil erruz, usu hizkuntzak historian onartuaz harago. Aditzetako izenkiak ere noiz latineko partizipioei, noiz infinitiboei dagozkie… eta zer esan latinaren hurrenkera sintaktikoa gordetzeko ahaleginez! Izan ere, lehen lana latineko esaldiaren eitea ahalik eta fidelenik bihurtzea zuen. Baina gramatikaz at, bazen egiteko are larriagoa, terminologia eta lexikoarena, alegia. Bibliaren eta liturgiaren edukia egokiro gauzatzeko suomieraren ondareak peitu zuena latinari nahiz suedierari eta alemanari mailegatu zion, baina

oraino usatu gabe batetan, ecin behingoaz halaco perfectionetan iar daitezquela, nola behar bailiçateque» (*Heuscalduney*). Zorigaitzez, Ginebran eta gainerako herrialde protestanteetan ohitura izatera iritsia zena ez zen inoiz heldu Leiz-ren mezenasaren lurraldeetan.

93. 135. orrialdean dioskunez, 1562ko edizioa ere ez zen Leiz-ren erreferentzia. Erkatze-lan sistematikoaren faltan inon bilatzekotan ordutik aurrera (1563-64ra bitartean? 1568ra arte?) argitaratuetan bilatu beharko dira euskarazkoaren erreferentzia nagusiak.

94. Hau suedieraren eta alemanieraren kalkotzat jo ohi da (Sauvageot 1973: 150).

—herritarrentzat erabat lexiko ilunaz testua ez josteko— hitz zaharrei adiera berriak eman zizkien, kanpotar berbak osagaiz-osagai itzulirik (kalkoak).[95] Zenbat honelako ez ote Leizarragaren testuan?[96]

### 2.5.1.4. Nongoa da Leizarragaren hizkera?

Aurreko atalean ikusi berri ditugun arrazoiengatik galdera honek euskalarien artean izan duen berebiziko garrantzia asko ematu arren, beharrezko iruditu zaigu izandako iritzi nagusiak hemen biltzea. Euskaldun modernoentzat duen arkaismoan oinarriturik, Bonapartek bere garaiko euskaratik arrunt urruti[97] zela eta Schuchardtek are Leizarragaren hizkera 1900 inguruko lapurtar eta behenafarrentzat gutxienez Luterorena alemaniar moderno batentzat bezain urruti dela idatzi zuten. Hara, MatIIren hasiera 1828ko itzulpen protestante batekin erkatuaz:

> 1. *Iayo cenean bada Iesus Bethlehem Iudeacoan regue Herodesen demborán, huná, Çuhurrac Orientetic ethor citecen Ierusalemera, 2. Cioitela, Non da Iuduén regue iayo dena? Ecen ikussi dugu haren içarra Orientean, eta ethorri gara hura adora deçagunçat. 3. Bada regue Herodes ençunic hori trubla cedin, eta Ierusaleme gucia harequin* (1571).
>
> 1. *Bada Jesus sorthuric Judeaco Betlhehemen, Herodes erreguearen demboran, iguzqui atheratcetic ethorri ciren Magoac Jerusalemerat, 2. Eta erran çuten: nun da sorthu den Juduen erreguea? ecen ikhussi*[98] *dugu haren içarra iguzqui atheratcean, eta ethorri gare haren adoratcerat. 3. Herodes erregueac adituric hori, içan cen trublatua, eta Jerusaleme gucia harequin* (1828).[99]

---

95. Ez omen erraz neologismo horien guztien zerrenda zehazten ez jatorria egiten; usu Agricolari berari egotzi ohi zaizkio baina harekin loturik ez diren testu labur zenbaitetan ere badira; Sauvageoten ustez, xii. mendeaz geroz Finlandian ari ziren misionisten latinetik etor litezke batzuk (1973: 213).

96. Gorago aritu gara Leiz-ren testuaren fidagarritasun edo fidagarritasun ezaz eta ez luzatzeko hara Herringek eta gainerakoek zer dioten beren laneko azken oharrean: «Alternatively, the researcher must present an argument that in a given analysis, a parameter or parameters that might otherwise be expected to exercise an influence (e.g. the fact that the data are poetic [gure kasuan itzulpen literal batekin ari garela] (…) are not relevant to the analysis at hand» (2000: 28).

97. Bonapartek *Le verbe basque*n bere 8 dialektoetarik bereiz jarri nahi izan zuen Leizarragarena, «vu le grand intérêt…» (forma arkaikoak ditu aipagai); Lafonek (1943: 61) ez du ikusten zertan daramakion abantailarik puntu horretan Etxepareri. 1891an hil zelarik Bonapartek ez zuen *RS* ezagutu, van Eysek 1896an berrargitaratu baitzuen Darmstadteko alea.

98. Ohar bedi <kh> Leiz-ren <k> /kh/-ren ordez; ik. beherago testuan § 2.5.1.7.

99. Bi horien tarteko den Haraneder, garrantzitsuenean 1828kotik gertuago da L-renetik baino: *1 Sorthu cenean, bada, Jesus Bethleèm Judeaco hirian Herodes erregueren demboran, ethorri ciren*

Delako urruntasun horren zergati nagusia hizkuntzak tarteko mendeetan izandako aldaketan datza: esaterako, XVII. mendearen hasierarako desagertuak ziren aoristoko formak —errefrau bildumetako eta Kredoko Kapanagaren eta besteren baten zenbait fosil eta ahozko tradiziotik jasotakoak salbu—, eta bakanduak eskubiko erlatiboak (gai honetaz ik. Krajewskaren (2017) datu eta analisi aberatsak); bestalde, *-ra/-rat* atzizkien nahasketa eta gainerako berrikuntza batzuk Leizarraga geroztikoak dira (cf. M. Igartua 1986). Schuchardtek aipatu Luteroren kasuaz landa, gogoangarri bide da Agricolarenaz, azterketa bikain zehatzaren ondotik Sauvageotek dioena:

> Avec le recul du temps, on se représente volontiers que la lecture de cette traduction du Nouveau Testament a dû être pour bien des lecteurs une source d'étonnement, une cause de gêne et aussi de perplexité devant bien des phrases qui n'avaient d'intelligibilité que pour ceux qui connaissaient au moins la Vulgate ou avaient eu l'occasion de se pénétrer du texte sacré à travers la traduction suédoise, voire même celle de Luther. Le linguiste non-finnois, devant ce monument vénérable, ressent quelque chose d'analogue à ce qu'il a éprouvé devant les traductions de ce même Nouveau Testament en tahitien ou en hawaïen, par exemple (218).[100]

Lafonentzat Leizarragaren hizkera lapurteratik da hurbilenik: ez dira bertan Etxepareréngan aurkitu aldaketak bokal topaketetan (Leiz *enea, mundua, nuen* / Etx *enia, munduya, nuyen*); orobat, «L garbiak» dira *izan* eta *edun*en adizki gehienak ere.[101] Alabaina, horien alboan —eta beste inon lekukotu gabeko formez gainera—, BNn, Zn nahiz bietan erabiliak ere badakartza; hortik haren galdera: «Comment s'explique ce mélange de formes appartenant à des dialectes différents?» (1943: 62).

Bonaparteren hurbilketak egokiago dirudi: honentzat BN eta Zko forma horiek Leizarragak oraindik bere garaian gordetzen zirelako bide zerabiltzan eta soilik gero, L modernoagoak, galdu eta enparatuek gordeko; horregatik zekusan komenigarriago «labourdin ancien» deitzea haren hizkerari. Lafonek, partez printzeari arrazoi eman arren, «Le parler propre de Liçarrague, celui qu'il a appris à Briscous, a pu être un labourdin mêlé de formes non labourdines, peut-être parce qu'il y avait dans cette

*orientetic magoac Jerusalemerat, 2 galdez cebi[l]tçala: «Non da judutarren erregue sorthu berria? Icussi dugu ecen haren içarra orientean eta haren adoratcera heldu gare». 3 Hori adituric Herodes erreguea altaratu içan cen eta Jerusalemeco hiri gucia ere harequien batera*. Ohar <c> *icussi*n.

100. 149. orrialdean hizkuntza horietara misionistek egin itzulpenen literaltasuna markatuaz, «cette "litteralité" du rendu va même jusqu'à produire des phrases qui sont totalement inintelligibles pour l'indigène» diosku.

101. Hots, ez du *au* > *u* (*nuzu*), *ai* > *i* (*gitu*), eta ezta *dira* → *zira, gira* edo *zaut*, Etxeparek edo XIX. aren amaiera eta XX. mendeko «navarro-labourdin litteraire» delakoak bezala (ik. 8. kap.).

localité des gens parlant labourdin et d'autres parlant bas-navarrais, peut-être aussi parce que sa famille comprenait des personnes d'origine bas-navarraise ou souletine» (1943: 63) zioen. Hurbilketa honen oinarrizko akatsa ez da estalian gelditzen: «Si, comme il est probable, le parler de Briscous était dès le XVIe siècle foncièrement bas-navarrais… »[102] Zergatik? Bonapartek berak ez bezala, Lafonek printzearen dialektoak eta hauen muga modernoak betidanikotzat zituelako? Usteketa honek sasiazalpen bilketa egitera eta ondorio ukronikoa ateratzera darama: «il est possible aussi que Liçarrague ait cherché, sans y réussir complètement, à labourdiniser son parler propre, comme le font aujourd'hui, avec plus au moins de succès, un grand nombre de Basques non labourdins quand ils prêchent ou écrivent» (ib.).[103]

Askozaz sinesgarriago dirudi Leizarragaren laguntzaileez dioenak: hauek —gogora lautik bi, bederen, zuberotarrak zirela— hizkera normalizatu bakarra erabiltzeko asmotan aritu baziren ere, esamolderen bat zuzentzean ohartuki nahiz oharkabean gerta zekiekeen zeinek bere hizkeratik sartzea. Leiz-ren lehen bertsioa 1565erako amaitu zela (agindua eman zitzaionetik bi urte baino lehen) eta ez dakigu noiz sartu zen inprimategian; hemen ere zenbait aldaketa eta aldaera sortu bide zen. Ez dakigu bertsio berririk egin zuen edo asko aldatu arazi zioten «laguntzaileek» lehen testu hura. Nolanahi ere, inprimategira lana eramateko bestelako oztoporen berririk (diru falta, inprimatzeko lanabes egokiena…) ez dugularik —hori jakinik ere ezin segurtatu 1565etik inprimategira sartu bitartean testuak ez zuela aldaketarik izan—, kontuan hartzekoa iruditzen zaigu Leizarragari egindako ordainketez kanpo, bere begiraleak ere beren parroki-lanetarik (igandeez landa) askaturik izan zirela hainbat urtez.

#### 2.5.1.5. Leizarraga eta euskararen batasunaz

> Gaineracoaz den becembatean, batbederac daqui heuscal herriâ quasi etche batetic bercera-ere minçatzeco manerán cer differentiá eta diuersitatea den: raçoin hunegatic sensu eguiazcotic aldaratu gabe, lengoageaz den becembatean ahalic guehiena guciey adi eraciteari iarreiqui içan gatzaitza, eta ez choil edocein leku iaquineco lenhoage (sic) bereciri (*Heuscalduney*).

102. Lafonek zuen «talde estankoen» ikuspegiarekin lotua da haren « sans doute le biscayen de Mondragon était-il mêlé de quelques formes guipuzcoanes » (1943: 67) Gar.en *dio* batez mintzo.

103. Halaz guztiz, —eta horrek fikzio itxura areagotu egiten du— berehalakoan aitortzen du ez dela modurik jakiteko zein neurritan Leiz-ren lanetan diren bere hizkera, bere familiarena, Beraskoitzekoa… eta zergatik diren BN eta Zko formak.

Esaldi honetatik abiatuaz —ez baita beste inongo euskarririk eta argudiorik eman— zenbaitek Leizarragak euskara gainerako nazio-hizkuntz berritzaileen gisara hartua izatea nahi zuela—,[104] eta 1968 geroztiko euskara batuaren aitzindaritzat ere ikusi nahi izan da horren aldeko askoren partetik (cf. Intxausti 1995: 157-60, besteak beste).[105] Ez da horrelakorik, ordea: aipatu pasartea ez da edozein itzultzaileren erretorikatik kanpokoa; are gehiago, Lutero bera zuen aitzindari: «Alemaniak hainbat dialekto ditu non elkarrengandik 30 milatara diren herritarrek ez baitute elkar ulertzen» (*apud* Burke 2006: 116-7). Hurbilago, hor zuen Charles de Bovelles-en (1533) lekukotasuna ere:

> [Chap. II. *A une distance très modique, on voit bientôt varier la langue populaire*. Nous nous efforcerons ici d'approfondir rapidement et de dévoiler les raisons pour lesquelles la langue française, notre langue maternelle, est si diverse et changeante à l'intérieur des limites du territoire français. (…) par la suite de la non-observance des règles, de la distance et des défauts de prononciation (…); elle admet aussitôt, en elle-meme, une très grande diversité, à tel point que *l'expérience nous montre qu'il y a actuellement en France autant de coutumes et de langages humains que de peuples, de régions et de villes* (Geure etzana).[106]

Alabaina, ez zuen ez premiarik, —zertarako? Nork erabiltzeko eta noren laguntzaz indarrean jartzeko?—, ez aukerarik, —oso denbora laburrean eta originalaren ereduari

104. Ez da aski, jakina, TB itzuli eta gero zenbait protestantek —tartean bere laguntzaile batzuek— beren semeak Leiz-gana bidaltzea euskara ikastera.

105. Cf. «It is a cliché—widespread in the older scholarly literature and still heard from non-linguists—that Luther was "the father of the Modern German language"» [Oharrean: «Unsurprisingly, such views seem to be more widespread in Protestant than in Catholic communities»] (Salmons 2012: 269).

Ondokoek ere badukete pararelorik euskalgintzan: «Traditionally, histories of German have focused on reinforcing the threadbare myth of an inexorable march toward the standard» (230); «Until recently, a fair number of linguists in German-speaking countries have embraced standard language ideology in ways that we find troublingly value-laden for scientific researchers» (275).

106. Aurrekoa ez da hitzaurrean erabilitako topiko bakarra: *segur içanez ecen Heuscaldunac berce natione gucién artean ez garela hain bassa, nô gure lengoagez ecin eçagut eta gure Iainco Iauna (…) are guehienic bihotz eman vkan ceraútana* [itzulpena burutzeko] *cen nic nuen sperançá, ecê moien hunez Iaincoarê hitz purac vkanê lutela sartze eta auâçamêdu Heuscal-herrian baina, Guciagatic-ere minçatzeco manerán anhitz arrastatu gabe, Iaincoaren hitz purari iarreiquiteco dutenec, sporçu dugu eridenen dutela (suporturequin) cerçaz contentu* (*Heusc*). Erka Burkek (2006: 81) Tomas Mororengandik eta itzultzaileen tradiziotik jasoak; ez dirudi tradizio erretoriko ezberdinen pisuaz eta erretorika hori galbahetzeaz aski arduratu denik orain arteko kritika.

hertsiki lotuaz egin zuen bere itzulpena—, eta ezta horretarako ezinbesteko oinarri zuen aurreko corpusik ere (ik. § 1.2 hizkuntz normalizazioaren baldintzez).

Hara «Heuscalduney» agertzen dien gogoa: «Iaincoac othoi, haren desohoretaco den doctrina gucia eçagut eraciric eta confunditurie, haren ohoretaco dena bethi entreteni eta auança deçala Iesus Christ bere Seme gure Iaunaren icenean. Amen». Hots, iragartzen zuenez (gainerako herrialdeetan antzeko kasuetan bezala) «hunetan emplegatu içan diradenéc [= "Iaincoaren hitz purari iarreiquiteco desira dutenéc" (ez "euskaltzaleek") "bihotz harturen dute; oraindanic gogo ere dutê beçala... passage difficilenén declaragarri annotationén eçarteco"». Edukia —eta hori ahalik zehatzetik islatzea— zen haren ardura erabatekoa, ez mintzatzeko era diferenteena; hau, bere eginkizun paregabea burutzeko eragozpen txiki bat edo bere lanaren zailtasunen aldarrikapen-bide zuen.

TB eta gainerako erreformatuen itzulpenek bertako hizkuntzen eredu batuan eragin handia izan badute (cf. Alemanian eta Finlandian bi adibide ospetsuenetara mugatzeagatik) hori *a posteriori* izan da —hamarkadak eta are mendeak tarteko—, ez berariaz eta beren-beregi itzultzaileek hori bilatu zutelako.

Berariaz bilatua izan ez arren, ondoko literatur hizkuntzan Leizarragak izandako eragina nabarmena da: Pouvreauren hiztegian (cf. Etxagibel 2014), Larramendirenean[107] Axularren hainbat aipamenetan (cf. Salaberri Muñoa 2000) eta lehenago Materrak harengandik hartu edo haren eredura eratuetan (Urgell 2015a eta Salaberri Muñoa 2007b). Beriainen zenbait grafia eta tradizio protestante hurbilenekoan (Zalgize, Bela, Urte) utzitakoa ere behar litzateke kontuan izan. Azkenik, badirudi Haranederrek interes handia zuela Leizarragaren testu «kutsatutik» bereizteko —cf. Ruiz Arzalluz (1987): Altunak ez du honelakorik aipatzen bere edizioan—, baina horrek ez zion oztopatzen komeni zenean harengandik hartzea.

2.5.1.6. Ondoren, Leizarragaren itzulpenaren bi alderdi —originalarena eta hark bilatu omen zuen arkaismoarena—, ukituko ditugu, funtsezko gai hauen argigarri.

«Jainkoaren hitz pura» eman asmoz, ezer kendu ez gehitzeko eskurik bere buruari aitortzen ez diolarik, letra etzanean dira eransketak. Hara Markosen lehen bi ataletan kausituak, Vulgata eta Calvinoren frantsesezkoaz lagundurik:

I 19 Zebedeoren *semea* eta Ioannes haren anayea; Iacobum Zebedaei et Iohannem fratrem eius (Iaques Filz de Zebedée, et Iehan, son frere)

107. Egileak hitzaurrean Leiz-ren hizkuntzaren edertasunaz dioenaz geroz, harrigarria ez da Urgellek (2000) bere iturri-azterketa bikainean haren ehundaka hitz bertan aurkitu izana, baizik eta lehenago inork horiek ez bilatzea ere.

I 21 Sabbath *egunean* sarthuric synagogan; et statim sabbatis ingressus synagogam (entrant es iours du Sabbat en l'assemblée [*La synagogue* 54 ss.])

I 24 ba ceaquiat nor aicen, *hi aiz* Iaincoaren sandua; scio qui sis Sanctus Dei (ie say que tu es le Sainct de Dieu)

Nabarmen, frantsesezkoa dugu Leizarragaren originala eta hari lotzen zaio hertsiki, ez edukinari dagokionez soilik, baita formaren aldetik ere: latinezkoan izan ez arren erromantzez beharrezko diren subjektu nahiz objektuko zenbait erakusle, «egun» *sabat* zehaztuaz, latinezko genitiboa zabalduaz «seme»-rekin, moduzko adizlagun zenbait… Letra etzanez eman ia guztien ordainak dagoeneko frantseseko testuan dira gehituak eta, garrantzitsuago dena, Leizarraga inoiz ere ez doa Vulgatarekin frantsesaren aurka.

Ezinbestekoa egiten da letra etzanen erabilera Leizarraga berak asmatu zuen edo non ikasi zuen ikertzea: ala itzulpena frantsesetik egin ondoren Vulgatarekin erkatu zuelako euskarazkoa ala erabili zuen frantsesezko edizioan dagoeneko markatuak zituelako.[108] Ez da lehen aukeraren aldeko arrazoiketarentzako tokirik; ez dira Leizarraga filologoaren kutixiak eta, nahiz ez dagozkien latinezko bertsioei ez Calvinoren itzulpenaren lehen edizioei, frantsesezko itzulpen kalbinista berankorretan (1563 ondokoetan?) dira eta horiei jarraitu zitzaien Leizarraga ia orpoz-orpoz.

### A. Nondik itzuli zuen Leizarragak TBa?

Gero eta argiago da (cf. Salaberri 2010a) Leiz-k batez ere (soilik?) original frantsesa erabili zuela, baina orain arte inork ez du edizio jakin bat markatu eta Salaberriren frogak oso sendoak izanik, « peritestualitatean » oinarritzen dira itzulpenaren testuan bertan baino gehiago. Urratsen bat eman ahal da Calvinoren Obra Guztien ediziorako G. Baum, E. Cunitz eta E. Reuss-ek (Brunsvigae 1896) prestatu TBrena baliatuaz. Hor 1546ko edizioa hartzen da oinarri, oharretan 1548ko (Lyon), 1554ko (Ginebra), 1555eko (G), 1559eko (G), 1562eko (G) eta 1563ko (Lyon) edizioetako aldaerak emanaz. Lan bikain honen bidez[109] 1562koaren aldaera exklusiboak bildu ditugu (editoreek 1562 eta 1563koa berdin-berdinak direla diote) eta Leizarragak horietan duen portaera ikuskatu:

108. Calvinoren editoreek ondoko edizioetan egin aldaketak datatu zituzten zehaztasun handiz; usu, Leizarragaren itzulpena ez doa bat lehen argitalpenarekin baina ez frantses eredu horretatik norabait urrundu delako, editoreek oharretan eman obra beraren edizio modernoago —eta Leizarragarentzat eskuragarriago eta are erabili beharragoren— batekin baizik. Ez da esan beharrik euskalaritzan egiteke den lan filologiko beharrezko honen zailtasuna baina baita interesa ere, amets eta ipuinetan oinarritzen ez den Leizarragaren hizkuntzaren edozein alderdiren ezagutzarako.

109. Honetan zein Leizarragari buruzko beste hainbat arazotan I. Ruiz Arzalluzekiko zordun gara.

V 5 61 car ilz possederont la terre / 62 car ilz heriteront la terre / Leiz hec lurra heretaturen baitute
V 37 61 et ce qui est dit outres ces choses, est du mal / 62 et ce qui est par dessus / Leiz eta hauçaz goiticoa gaichtotic da
XIII 19 61 le Mauvais vient / 62 ce Mauvais vient / Leiz ethorten da Gaichto hura

Argi da 1562/63ko edizioa —edo hauen aldaera berritzaileak gorde zituen ondokoren bat— ezagutu zuela, bestela hainbat irakurketa garrantzitsu ezin azal bailiteke. Haatik, horrek (edo horiek) ezin azal litzake(te) 1561ekoaren irakurketa exklusiboak gorde izana:

VI 15 61 si vous ne pardonnez… ne vous pardonnera / 62 si vous ne remettrez… ne remettra les vostres / Leiz baldin barka ezpadietzeçue guiçoney bere faltác, barkaturen drauçue çuey-ere…[110]
XI 14 61 Et si vous le voulez recevoir / 62 Et si vous le voulez mon dire / Leiz Eta, baldin nahi baduçue recebitu

Beharbada, urte ezberdinetako aleak izan zitzakeen —bata 1561ekoa, beste bat 1562/63koa edo geroagokoa—, haien artean ziren ezberdintasun txikiez ohartzeke, edo —agian— Leizarragak bere 1. idaztaldirako (1563-5) edizio bat eta gero bestea erabili, 1.kotik aterea 2.arekin zuzenduaz, baina ez sistematikoki. 1563-70/71 bitarteko Calvinoren segizioko edizio guztien *collatio*a burutu tartean ezingo da erabaki 1562koa ala geroztikoa(k) d(ir)en lanean erabili azkena(k). Hori bai, itzulpenaren jatorri-hizkuntzaz izan zitezkeen zalantza exkaxak uxatzen dira: originala frantsesa zen, —ez grekozko eta ezta latinekorik[111]—, xvi.m. osoan hain ugari ziren Calvinoren eta Ginebrako tradiziokoa, eta gutxienez bi ediziotako aleak erabili zituen (1561, 1562-3 geroztikoa).

110. Hemen *barka – pardonner ~remettre* arteko erlazioa zaigu axola, baina ohar bedi Leiz-ren itzulpenean ukapen bat falta dela 2. zatian (edo sobera dela 1.koan).

111. Ik. testuan (§ 2.5.1.6 honen hasieran) letra etzanen erabileraz: hauek ez zituen ez latinezko ez grekerazko edizioetan aurkitu, frantsesezko itzulpen kalbinista berankorretan (1563 ondokoetan?) baizik.

1. TAULA: LEIZARRAGAREN LEXIKOA

| | Leizarragak EHan | Leizarragak EHtik kanpo | Leizarragak Guztira | Euskal Hiztegi-an Guztira |
|---|---|---|---|---|
| Ondare zaharrekoak | 431 (%57) | 59 (%39) | **490 (%54)** | 678 (%58) |
| Bakunak | 275 (%37) | 1 (%1) | **276 (%24)** | 430 (%37) |
| Eratorriak | 106 (%14) | 24 (%16) | **130 (%21)** | 157 (%13) |
| Konposatuak | 50 (%7) | 34 (%23) | **84 (%9)** | 91 (%8) |
| Maileguak | 316 (%42) | 88 (%58) | **404 (%45)** | 477 (%41) |
| Zalantzazkoak | 5 (%1) | 4 (%3) | **9 (%2)** | 15 (%1) |
| Guztira | **752** | **151** | **903** | **1.170** |

(Blanco 2015etik: 16. taula)

Lexiko Arkaikoaren azterketan (cf. Blanco 2014, 2015 eta hemen §3.6) bada arreta berezia eskatzen duen daturik, eta Leizarragarenak berarenak besterenak baino lehen. Analisi orokorrean ez bezala (%42), hemen bere maileguen nagusitasuna azpimarragarria da oso (%58), maileguak ondare zaharrekoak (%39) baino askoz gehiago baitira; esate baterako, *abantzamendu*, *akablatu*, *alogeatu*, *ametiste*, *artxer*, *banketatu*, *benigno* eta abar.

Eratorrietan ere oinarri mailegatuko hitzak dira hamarretik zortzi: *abundoski*, *apazegagarri*, *ausartgo*, *aprobaerazi* eta abar; konposatuen artean elementu bietako bat mailegua daukatenak dira erdia baino gehiago (*adin-flore*, *afekzione-gehiendun*, *bake-ezarle*, *bide-kantoin,* etab.).

*EH*tik kanpo geratutakoak kontuan hartuz gero analisi nagusian antzemandako mailegu kopurua (316, %42) nabarmen areagotzen da (404, %45); honekin batera, konposatuen kopurua nabarmen hasten da (50 > 84) eta ostera, ondare zaharreko bakunen eta eratorrien ehunekoek behera egiten dute.

Sarasolak *EH*tik kanpo utzitako maileguak behatuz gero, hauetako asko frantsesetik hartutakoak direla ere oso nabaria da. Besteak beste, *ametiste*, *antekrist*, *aparent*, *artxer*, *ardent*, *arrogant*, *aumentazione*, *automme*… dira horietako batzuk. Leizarragaren *Testamentu Berria* frantseseko bertsio batetik itzulia izanik, mailegu frantsesen ugaritasuna espero izatekoa zen, noski, eta baita, hitz hauek *EH*tik kanpo geratzea ere, mailegu moderno horiek sustraitu gabeak baitira ondoko euskal tradizioan ere. Badira, azkenik, Leizarragaren eraginez bertakotu eta EHn sartuak.

## B. Leizarragaren arkaismozaletasunaz

Leizarragaren hizkeraz esan izan da kronologia eta geografiagatik legokiokeen baino arkaikoagoa dela, Etxeparerena baino zahartasun larriagoa, berariaz bilatua... Arkaismoaren jatorria —berezkoa garaiko hizkuntzan, berak bilatua efektu estilistikoren bat edo euskaldun gehiagoren ulergarritasuna iragan partekatuagoan lortu asmoz...— mugatuaz joateko, esperimentu txiki bat egin dugu Markosen lehen bi ataletan, beharbada garaiko aditz-sisteman ondokoarekin erkatuaz markagarrien diren aoristoak miatuaz (ik. kategoria honetaz § 1.0.2 eta § 3.4.3):

> I 9 Eta *guertha cedin* (et advint)... Iesus *ethor baitzedin* (Iesus vint) ... eta *batheya baitzedin* (fut baptizé); I 10 *ikus citzan* (il veit); I 11 voz-bat *eguin cedin* (Et vint une voix); I 12 Spirituac *irion ceçan* (l'Esprit le tire); I 13 Eta *egon cedin* han (Et estoit [*Fut* 61. S.] la); I 14 *ethor cedin* Iesus (Iesus vint); I 16 *ikus citzan* (il veit); I 17 Eta *erran ciecen* (Iesus leur dit); I 19 *ikus citzâ* (il veit); I 20 *dei citzan* hec (les appella); I 23 oihuz *iar cedin* (lequel s'escria)...

Ia 60 dakartza, guztiak frantseseko *iragan burutuen* ordez. Bestalde, originaleko horrelako ia dozena bat, ez aoristoz, baizik eta iraganeko bestelako molde modernoagoz —Partiz. + *ukhan / izan*— ordezkatu du. Beraz, ez da inongo arkaismorik gehitu, kontrakoa baizik, originalak zuenari.

Froga sendoago bilakatzen da egilearen beraren edo besterenganiko jatorri ezagunik gabeko «Christino batec iaquiteco dituen punctu principalén definitioneac eta descriptioneac» bezalako testu bat miatuaz eta erkatuaz (14. or., Markosen bi atalotako 8 txikiagoen aurka). Ebangelioa bezain narratiboa izan ez arren, badira iragan urruneko hainbat pasarte: 2 *ceinez elegitu eta hautatu vkan baititu Iesus Christen membro eguin placer cituenac... ledinçat*, 3 *ceinez iraitzi baititu iustoqui ... eracuts ledinçat*; *Lehen guiçona creatu içan cenean*; *Iaincoac hura dohatu eta ornatu çuen dohainez*; *choil galdu vkan ditu*, etab. Alabaina, ez da aoristo bakar bat ere.

Txikia da eta ez oso narratiboa Erreginari egindako gutuna eta bi aoristo dira bertan: «guti falta cedin non ezpainendin choil guibelera» [peu s'en fallut que ie ne desistasse entierement] eta «gogo eguin neçâ neure ahal guciarê eguitera» [ie me resolu de faire ce qui seroit en moy]. Alabaina, gehiago dira aoristoak erabili gabe utzitako iraganak: cf. *ce que dit vn iour vn nommé Paederatus* [Paederatus deitzen cen Sparta hirico batec egun batez erran vkan çuena], *s'en retourna tout ioyeux en sa maison* [alegueraqui bere etcherat itzuli içan cen], *ce qui me donna plus grande asseurance fut* [guehienic bihotz eman vkan cerautana cen]).[112]

---

112. «Heuscalduney» deritzon orrialdean ulertzekoa da aoristorik ez bestelako iraganeko formarik ez izatea.

Beraz, —ez da harritzeko, kontrakoak ez baitu inongo egiantzik aurreko tradizio eredugarririk eta inoren eta Leizarraga beraren jardun filologiko aberatsagorik gabe— ez dirudi Leizarragak berariazko arkaismorik bilatu duenik, baizik eta, alderantziz, ereduarenak areagotu duela oraindik bizirik zen (baina hamarkada gutxitan ia zeharo desagertutako) ezaugarri zahar baten erabilera —ez Materrak ez bestek gorde zuen fosil solteren batez landa—, beti ere originalarekiko morrontza erabatekoan.

### 2.5.1.7. Azken ohar bat Leizarragaren grafiaz

<k> grafema oso bazterrekoa da 1800 arteko Iparraldeko testuetan eta, ezinbestean, <k> = [kh] baliokidetza erabat ezezagun Zalgize eta Bela (protestanteez) eta —neurri batean— Materrez landa. Leizarraga apartekoa da honetan, TB eta gainerakoetan ez baita Etxepare eta enparatu testuetako <qh> ez <kh>-rik. Halere, [ekhaRi], [ukhen], etab., sistematikoki bereizten dira [duk], [dagoke] eta enparatuetarik, <ekarri>, <uken> ~ <duc>, <dagoque>, etab. Usadio hau arrunt ezaguna da (cf. Mujika 1997), baina ez hainbat horren zergati-jatorriak.[113]

<k>ren erabilera ez zen batere arrunta frantsesez XVI. mendean —ezta mendebaleko hizkuntzetan ere, Kintilianok eta Varronek horren beharra ukatu zutenaz geroz— eta inprimatzaile gehienek ez zuten letra hori beren inprimategietan. Salbuespen garrantzitsuena Maigret eta Ramus gramatikalari protestanteena eta haiei lotu inprimatzaileena dugu (Kukenheim 1932: 56-7), batzuk eta besteak «hots bat, grafema bat» hatsarria jarraiki (Baddeley 2012: 107).[114]

Leizarragaren hautu grafiko hain bereziak azaltzeko modurik errazena Meigret eta Ramusengan inspiratu zirela pentsatzea bide dugu: <k> ez <q> eta <c>ren ordez —hauek dagozkien testuinguetan sistematikoki erabiltzen baitira—, horiekin batera baizik, edozein hizkuntza eredutan peitu zen hotsa irudikatuaz. Honenbestez, biunibokotasun erabatekoa erdiesten zuen: [kh] hotsa <k> grafemaz gauzatzen zen (eta soilik horrela), eta <k>-k soilik [kh] balioa zuen. Are gehiago: <k>-rekikoak bat datoz egilearen beste berrikuntza ezagun batekin ere: hots, Leizarragak sistematikoki bereizten ditu txistukari eta sabaikarietan igurzkari (<s>, <z>, <ch>) eta afrikatuak

113. Baddeleyk dioenez (2012: 115) «(…) in France, as in other countries, orthographical reform was related to Protestantism, and many innovations were disseminated through editions of the Scriptures». Baina protestantismoa ez zen estatu-erlijio bilakatu eta harekin lotu ortografia berria gaitzetsi zen (ibid.); Euskal Herriko bilakabidea funtsean parekagarria da.

114. Meigretek ortografia zaharraren aurka «gehiegikeria», «siniskeria», «ezjakintasun eta dotrina faltsu», «huts eta akats-osin», «egiaren argiaren aurkako», etab. bezalako terminologia darabil (Calvinok legez) erlijioaz ari bailitzan (Baddeley (2012: 108).

(<ts>, <tz>, <tch>), garai hartan eta are zenbait mende beranduago ohi zenaren aurkako biunibokotasun osoz.[115]

### *2.5.2. Betolatzaren Dotrina*

Trento ondoren euskal elizbarrutietan bertako hizkera ezberdinetan dotrina elebidunak egiteko agindua emana zen baina ez dugu Betolatzaren 1596koaz besterik gordetzen.[116] Mitxelenak Bilbokotzat hartu zuen bere argitalpenean, uste horrek arazo funtsik gabeak zekartzalarik hango Mikoleta eta hurbileko *RS*rekin erkatzean (cf. Lakarra 1983): arrunt arkaikoagoak dira hauek morfosintaxiari dagokionez, berritzaileagoa Mikoleta fonetikan (txistukariak) eta aski ezberdinak lexikoaren zenbait alderditan (*izen/uzen, gusti/dusti*) eta are aditzaren puntu garrantzitsuetan (Bet *dabe, -n* iraganean, partizipioa irrealetan, aoristorik ez / *RS*-Mik *daude, -n/-ø* iraganean, partizipioa-aditz oina irrealetan, aoristoak ugari).

Alabaina egileak liburuxka —16 orrialde, erdaraz eta euskararaz bi zutabetan, otoitzekin eta alfabeto eta silabekin irakurtzen ikasteko—, Bilbora Araban inprimategirik ez izatearren eraman bide zuen, eta ez hiri horrekin egileak lotura berezirik zuelako: Henrike Knörrek erakutsi zuenez (1986) Martinez de Betolatza doktorea Arabako herri horretakoxea zen, bertan apaiz izana eta 1592tik bere heriotza arte (1599 amaierarantz) Santo Domingoko Kabildokidea. Uste izatekoa da, beraz, testuko hizkera funtsean edo bere herrikoari edota Arabako lurralderen batekoari dagokiola, ez haatik Gasteizkoari edo Lautada-ekialdekoari (gonbara Landucci, Lazarraga zein Gamizekin). Ez da lekukotasun emankorregia baina Landucci eta Lazarraga baino hizkera moderno eta mendebaleragokoa dirudi: deklinabidean *-rean* fosildurik, aditzean soilik *egin* irrealiseko LAG transitiboan (Laz eta *RS*-Mik. *egin-*ezan), -gaz/-kaz* eta ez *-kin*… (cf. Zuazo 1998).[117]

---

115. Gero Larramendiren bitartez zabalduko da hau astiro-astiro Hegoaldean (ik. Lakarra 1985b eta liburu honetako 7. kap.).

116. Elso nafarraren kasuaz gainera (cf. *ConTAV* § 5.2.8), baliteke gehiago ere izatea: Vinsonek *VJ* XVI. mendekoren baten berrargitalpentzat zuen, nahiz Ulibarrik (2010) gordetako aleak 1640 ingurukotzat dituen.

117. *-mintu* (*mandamintu*, etab.) ez da hutsa, B hego-mendebaleko edo A-iparraldeko beste zenbait testutan ere errepikatzen den ezaugarria baizik. *Det* darabil Bet-ek behin (baina ez bokalismo bereko paradigmako gainerakoak), *RS*ek bezala; alabaina, hauek —Albeizen eta Lazarraga ekialdekoagoen aurka (*det/dot/deut*)— erratak dirudite eta ez polimorfismoaren ondorio.

## 3. LEKUKOTASUNEN AZTERKETA

Lehen testu luze eta zabalak Euskara Arkaikoaren garaikoak izanik, ordukoak ere badira euskararen sistema linguistikoa bere osotasunean ordezkatzen duten lehen lekukotasunak. Atal honetan, sistema horren deskribapena eginen dugu, grafia (§ 3.1), fonologia (§ 3.2), izenaren morfologia (§ 3.3), aditza (§ 3.4), joskera (§ 3.5) eta lexikoa (§ 3.6) banan-banan aztertuz.

### 3.1. Grafia

Euskaraz lehen aldikotz idatzi zutenek grafiaren arazoari buru egin behar izan zioten. Denek ala denek, idazten eta irakurtzen zekizkiten beste hizkuntzen grafia-sistemak oinarritzat harturik, euskararentzat egokiak izan zitezkeen grafemak hautatu eta erabili zituzten. Oro har Iparraldekoek latina eta frantsesa —gaskoiera gutxiago[118]—, eta Hegoaldekoek latina eta gaztelania dituzte eredu. Testu gehienetan, latinaren eta erromantzeen sistema ortografikoekiko menpetasuna erabatekoa da, eta biziki urriak dira euskal hotsei egokitzeko saioak —ik. txistukariei buruzko atala § 3.1.3—.

Lehenbiziko liburu argitaratuetan, erabiliriko grafiari buruzko azalpen zuzenak ez dira falta. Ohar horiek, nork bere sistema grafiko propioaren berri emateko beharraz gain, euskal irakurleak hezteko beharra ere salatzen dute, irakurtzen jakin arren, ez zekitelako euskaraz irakurtzen. Etxeparek, prologoaren aitzineko orrian ohar bat egiten du erabilitako zenbait grafemari buruz, bakoitzaren ahoskera zein den zehazteko: «Aduertant Impressor, & lectores quod .z. nunquam ponitur pro .m. Neque .t. ante .i. pronunciatur pro .c. Et vbi virgula ponitur sub .ç. hoc modo quod fit dum præponitur vocalibus a.o.u. Tunc .c. pronunciabitur paulo asperius quam .z. vt in .ce.ci.».[119] Gisa berean, Leizarragak *Heuscaldunei* eginiko abisuan, «*Heuscarazco hitzac, nola scribatzen, hala letra guciequin Latinén ançora pronuntiazen-ere dirade: eta* u *vocala, bethequi,* ou *baliz beçala*» dio.

Atal honetan, /i/, /u/ bokalak, /b/ herskari ahostuna eta txistukariak baizik ez ditugu aipatuko, Euskara Arkaikotik hona, hots hauen irudikatzeko moduak franko aldatu direlakoan. Bukatuko dugu idazkera etimologikoari buruz ohartxo bat eginez.

---

118. xv. mendean zehar, okzitanieraren usadio grafikoak higatuz doaz, eta frantsesari hartu grafemak gero eta gehiago sartzen dira, hala idatzi administratiboetan, nola obra literarioetan (Martel 2013: 512, 517).

119. «Inprimatzailea eta irakurleak abisatzen dira <z> ez dela sekula <m>-ren ordez erabili, <i> aurreko <t> ez dela <c> ahoskatu behar. Eta <ç> *a, o, u* bokalen aurrean, *z* baino pittin bat lazkiago ebakitzen da, *ce, ci* bezala».

### *3.1.1. Bokalak*

xv eta xvi. mendeetako euskal testuetan <i>, <j> eta <y> erabiltzen dira /i/ aurreko bokal itxia eta /i̯/ bokalerdia aurkezteko. Bizkitartean, ez dute banaketa bera testu guztietan. Salbuespenak salbuespen, Leizarragak <i> grafema hobesten du testuinguru gehienetan —bokalerdia kontsonante aurrean (*baita*) eta hitz bukaeran (*dei*); bokala hitz hasieran (*içan*), hitz bukaeran (*ni*) eta hitz barnean (*ecin*)—, eta <y> grafema bokalartean kokaturiko bokalerdia irudikatzeko erabiltzen du (*deya*). Alderantziz, Etxeparek <y> grafema ugari erabiltzen du testuinguru guztietan —nahiz eta maizago bokalerdia aurkezteko— (bokala: *iguzqui / yguzqui, vici / vicy, ecin / ecyn;* bokalerdia: *aire / ayre, exay, othoy*). Hegoaldeko egileek, gaztelaniaren idatz-ohiturei jarraikiz, <y> grafema bokalerdia irudikatzeko (*RS vay, baya, eceyn;* Laz *musicoay*, *oy*) eta hitz hasierako bokal itxiaren irakurketa errazteko erabiltzen dute (*RS ycasi, ybini,* Laz *yramo, ycasiric*); gainerako testuinguruetan, aldiz, <i> dago (*RS zirola, bioza;* Laz *erruqui, eriozea*). Nahiz eta urriago, <i> grafemaren aldaera luzea den <j> grafema ere erabiltzen dute idazle zaharrek, <i> baino deigarriago delakoan, irakurketa zuzena bermatzeko: Zum 11 *asegujn*, 13 *mjiocayti* 'mihiok gaitik', 22 *çimjenturic*, Olaz *Njc*, *çajtut*, Beor *çurj, Laz mjnez*. Azkenik, <i> grafemak erabilera kontsonantikoa ere badu Iparraldeko testuetan, /ɟ/ hotsa irudikatzeko erabiltzen baita <g> grafemarekin batera —zehatzago <g> grafema dugu *e* eta *i* aurrean (Etxp *gin, gende*; Leiz *gendetzea*) eta <i> *a, o, u* aurrean (Etxp, Leiz *iaun, ioan*)—. Hegoaldean, <j> grafemak beste hots bat irudikatzen du (ik. § 3.1.3). Dena dela, hala Iparraldean nola Hegoaldean, <y> grafema ez da sekula agertzen /ɟ/ hotsaren balioarekin.

Atzeko bokal itxiari dagokionez, xvii. mendera arte, bi grafemaren bidez aurkezten da: <u> hitz barnean eta bukaeran (Etxp *buruya, dolu*), eta <v> hitz hasieran (Etxp *vndar*; *RS vrrago,* Laz *vrten*). Letra larrietan <V> erabiltzen da hauen ordez (Etxp *Vste*; *RS Vzqur*; Leiz *GVRE IAVNAREN TESTAMENTV BERRIA*). Hiru grafema hauek balio kontsonantikoa ere bazuten, /b/ herskari ezpainbikariarena, hain zuzen (Etxp *deuotqui* 'debotki', *vaytan, Viocian*; Laz *berua* 'berba', *videa*). Orduan, grafemen irakurketa zuzena bermatzeko trikimailu batzuk erabiltzen ziren, adibidez, <u> grafemari <h> gehitzea balio bokalikoa duela azpimarratzeko: *RS* 147 *hurrutirean*, 216 *hulerzen*, 220 *parrahua* 'ermitaua' (cf. gazt. *huevo* eta fr. *huile*). *RS*en hain nasaia den joera grafiko horren jatorria frantsesaren usadio grafikoetan bilatu behar da, agian (cf. Boddeley 2012). 1680. hamarkadatik aurrera, hiru grafema hauek balio bikoitza galdu, eta <u> bokalari, eta <v> eta <V> kontsonanteari egokituko zaizkie.

Azkenik, xv eta xvi. mendeetako testuetan, Zren 6. bokala ez da transkribatu ohi. Euskalki horren lehen lekukotasun arkaikoa Leiz-ren L-Z hiztegitxoa da, eta horretan /u/ eta /y/ ez dira grafikoki bereizten, bietarako <u> erabiltzen baita (*samurtcia* /u/ vs *sorthu*

/y/). Orobat Oih. eta Zalgizeren errefrauetan —azken honek salbuespen bakarra du, *ourde* 51—: 20 *çura*, 92 *urac* eta 25 *vtci*, 4 *ditu*. Bela dugu lehena atzeko bokalarentzat <ou> eta haren kide palatalarentzat <u> erabiltzen duena (ik. 6. kap. § 3.1.1): 2 *eztakoussa* 'ez dakus', 6 *houna* 'ona', 13 *ouhouñac* 'ohoinak' vs 22 *utzi* 'ützi', 40 *duhuru* 'dühürü, diru', 43 *umia* 'ümia, umea'.

### *3.1.2. Herskariak*

Inguruko hizkuntzek ekarririko ohitura grafikoari jarraikiz, XV-XVI. m.etako euskaldunek /b/ herskari ezpainbikari ahostuna <u>, <v> eta <b> grafemen bidez adierazten dute. Hiruak euskal jatorriko hitzetan zein maileguetan erabiltzen dira (Etxp *alaba, vehar, benedica, vanitate, prouechu*; GA *alua aquio* 'alba hakio', *valiz* 'balitz', *badoc* 'badok'; *RS yuaya* 'ibaia'*, ybarrac* 'ibarrak'*, veti* 'beti'), nahiz eta <v> maizago agertzen den latin-erromantzeari harturiko hitzetan. Hizki larria erabiltzekotan, /u/ atzeko bokalarekin bezalaxe (ik. § 3.1.1), <u> eta <v> grafemak gabe, <V> erabiltzen da (Etxp *Vihocian*, *Verce*; Leiz *Verthutea, Vicitzeco*). XVII. mendean <u> grafema bokalaren adierazpenari mugatzearekin batera, <b>, <v> eta <V> baizik ez dira geldituko herskaria ordezkatzeko (ik. 6. kap., § 3.1.2).

### *3.1.3. Txistukariak*

Euskalki arkaiko guztiek sei txistukari[120] dauzkate, frikari bizkarkaria /s/, apikaria /ś/ eta sabaiaurrekoa /ʃ/, eta afrikatu bizkarkaria /ts/, apikaria /tś/ eta sabaiaurrekoa /tʃ/.

Oro har, lehen idazleek bizkarkariak, apikariak eta sabaiaurrekoak —ahoskagunean dauden oposaketak— argiki bereizten dituzte, bakoitzari grafema sail bat egokiturik. Bizkarkaria hiru grafemaren bidez adierazi ohi da, <c>$^{e,i}$ (Etxp *auci*; *RS cejan*), <ç>$^{a,o,u}$ (Etxp *çaldun*; *RS goço*) eta <z> –normalean– silaba mugetan (Leiz *fedez, dituzten*; *RS vetez, azcurriac*).[121] Apikaria <s>, <ss> eta <ſ> grafemek ordezkatu ohi dute. Lehena testuinguru guztietan erabil badaiteke (minuskulan / maiuskulan, hitz hasieran, bokal artean, silaba bukaeran), <ss> bokal artean (Etxp *dacussat*, *RS assea,* Bet 92 *essaten*), eta <ſ> hitz hasieran (Leiz *ſperançá*, *ſacrificio*) eta barnean (Leiz *ſaſoinez, ikuſteco*) agertzen dira, beti minuskulan. Sabaiaurrekoari doakionean, Iparraldean <ch> eta <x> erabiltzen dira haren islatzeko (Etxeparek biak *xahutu, ixil, chipi*; Leizarragak <ch> *ichildu, gaichtaguin*),

---

120. *Txistukari* zentzu zabalenean harturik, txetxekariak barne, alegia.

121. Leku faltaz joera orokorrak ditugu aipatzen, autore bakoitzaren xehetasunetan sartu gabe. Alta, emandako orokortzearen kontraadibideak ez dira falta. Adibidez, *RS*en <ç> da ohikoena *e* aurrean (*çelayan, çerurean…*) eta <z> oso arrunta da bokal artean (*bizi, ezaun, guzurrac*).

Hegoaldean, gaztelaniaren idatz-sistemari jarraikiz,[122] <j> eta <x> dira nagusi txistukari sabaiaurrekoa adierazteko (*RS ajeric* 'haizerik' / *axeac*; Laz *gajoturic* 'gaixoturik' / *gaxoric*, *baje* / *baxe* 'baizik'). Gisa berean, mendebaldeko testuetan, hitz hastapeneko ioda, eta hitz barnean /ViV/ sekuentzietan gertatzen diren iodaren indartzeak <j> edo <g> grafemen bidez islatzen dira: *RS jaio, janzi, jan, anaje, ojal, ojan;* Laz *joan, jacan, jaicoari*; Zar 11 *anage*, Sicu *anagéa*. Iduri luke hauek ere, aurrekoek bezala, txistukari sabaiaurrekoa islatzen zutela hizkera hauetan.

Alabaina, euskaraz lehen aldikotz idatzi zuten gehienek ez zuten frikari eta afrikatuen arteko oposaketa grafikoki islatu. Idazle gehienek aipatu berri ditugun grafema berak erabili zituzten batarentzat zein bestearentzat (*RS* 99 *sasez* 'satsez', 145 *gauza* 'gauza' / 353 *gaza* 'gatza'; Etxp *eztuçu* / *baçu* 'batzuk'; Laz *ugaçaba* / *erioça-, esango* / *aseguin* 'atsegin'). Hegoaldean afrikatu sabaiaurrekoa salbuespen bakarra dugu, horretarako <ch> erabili ohi baitzen, gaztelaniaz bezala (*RS* 39 *chitac*, 119 *guichi*). Joera hori bat dator lehenago aipatu inguruko erdaren grafia-sistemekiko menpekotasunarekin: hizkuntza erromantzeek afrikaturik ez izanik —gaztelaniak sabaikaria izan ezik—, ez zuten eredu grafikorik eskaintzen, eta ondorioz, oposaketa markatu gabe gelditu zen gehienetan. Halere, gutxi izanagatik, afrikatuak frikarietatik bereizteko modua bilatu zuten idazleak badira. *RS*en, apikari frikari zein afrikatua irudikatzen duten <s> (471 *gosea* vs 66 *losauagueac* 'lotsabageak') eta <ss> (166 *assi* 'hasi' vs 426 *yssua* 'itsua') grafemen ondoan, <sh> (338 *oshoa* 'otsoa'), <shs> (434 *eshsean* 'etsean, etxean', 442 *ushsa* 'hutsa'), <cshs> (133 *ocshso* 'otso') eta <cshsz> (455 *vicshszdunic* 'bitsdunik') daude afrikatua ordezkatzeko —nahiz afrikatuaren agerraldien % 90 baino gehiagotan <s> edo <ss>ra jo—. Garibaik <sh> proposatu zuen apikari afrikatua (/tś/) aurkezteko (*ush* 'huts'). Zumarragak birritan <çz> darabil bizkarkari afrikaturako (*bioçz* 'bihotz'). Orobat, Landucciren hiztegian, A eskuak <sç> darabil afrikatu bizkarkari (*asç* 'hatz', *bederasçi* 'bederatzi') zein apikaria (*auerasça* 'aberatsa', *esçea* 'etsea, etxea') irudikatzeko, baita han-hemenka <sch> ere apikari afrikaturako (*loscha* 'lotsa'). Gisa berean, Etxepare saiatu zen apikarietan frikariaren eta afrikatuaren arteko bereizketa islatzen, frikarirako <s> eta <ss> eta afrikaturako <x> (*amexetan* 'ametsetan'), <stz> (*arrastz* 'arrats') eta <ts> (*gaicetsi* 'gaitzetsi') grafiak erabiliz — <x> sabaiaurreko frikarirako ere baliatzen zuen, bearnesez bezala—. Halaber, beste zatiak baino beranduago idatzitako prologoan eta XIV. eta XV.

---

122. Gaztelania arkaikoak /ʃ/ eta /ʒ/ frikari sabaiaurreko ahoskabea eta ahostuna zeuzkan, <x> eta <j> grafemen bidez irudikatzen zirenak hurrenez hurren. Erdi Aroan zehar, ahostun / ahoskabe oposaketa neutraldu zen ahoskabearen alde, eta XVII. mendetik aurrera, delako frikari sabaikari ahoskabea belare /x/ bihurtu zen. Bestela erranik, aztergai dugun garaian, gaztelaniazko maileguetan dauden <x> eta <j> grafemak /ʃ/ gisa irakurri behar dira: *enojaduric, congoxaduric, exemplu* (Laz).

poemetan, <tz> erabili zen bizkarkarirako: Prol *cantatzeco,* xv,7 *burlatzen*, 8 *ezpaitzen*. Azkenean, Leizarraga dugu garai honetan banaketa grafiko tinko eta sistematikoa dakarren bakarra. Hark, <tz>, <ts> eta <tch> darabiltza afrikatu bizkarkari, apikari eta sabaiaurrekoarentzat hurrenez hurren: *deitzen, hitz, aratsa, ertsi* 'itxi', *etchean, altchatu.* Berrikuntza grafiko hauek gramatikalari eta inprimatzaile protestanteek hizkuntzen grafia hobetzeko eginiko ahaleginarekin lotu behar da, fonema bakoitzak bere grafema propioa izatea helburu baitzuten (§ 2.5.1.7). Baliteke *RS*en agertzen diren afrikatuak eta frikariak bereizteko saiakerak ere garaiko gogoeta gramatikografikoei zor izatea.

### *3.1.4. Grafia etimologikoa*

Euskaraz lehen aldikotz idatzi zuten egileek beste arazo bat konpondu behar izan zuten, maileguen grafiarena, hain zuzen. Oro har, bi joera ikusten ditugu aztergai dugun garaian. Alde batetik, Leizarragak higanoten tradizio jasoari jarraikiz maileguen jatorrizko idazkera hertsi-hertsian errespetatzen du. Haren lanean zehar, grekotiko <hie>, <y>, <ph>, <th>, <ch> edo latinetiko <bb>, <dd>, <gg>, <pp>, <tt>, <cc>, <ff>, <mm>, <nn> bezalako grafiak, edo, *mn, bs, db, pt, ct* bezalako kontsonante multzoak oso ohikoak dira maileguetan: *Hieremias, paralytico, Propheta, authoritate, Sabbath, diffamatu, condemnatione, absent, adbocat, baptismoa, fructuac* (Mugika 2002: 245-52). Bestetik, idazkera fonologikora hurbiltzen ahalegindu zirenak daude. Etxepare horietarik dugu, nahiz jatorrizko grafiak badituen: I,147 *apellacia* (lat. *appellāre*), I,280 *acusatu* (lat. *accusāre*), IX,14 *difama(tu)* (lat. *diffamāre*), I,256 *sentencia* (lat. *sententia*), I,103 *comdenatuya* (lat. *condemnāre*), baina I,39 *gratia,* I,295 *aduocatu* (lat. *advocāre*), XIV,9 *scribatu* (lat. *scribere*), Prol *lettra* (lat. *littera*), XIII,89 *condemnatu*, I,34 *recebitu*.

## 3.2. Fonologia

Atal honetan, Euskara Arkaikoaren hots-sistemaren ezaugarri markagarrienak baizik ez ditugu aurkeztuko. Hortaz, bokaletako berezitasunak aipatu ondoan (3.2.1), kontsonanteei helduko diegu (3.2.2).

### *3.2.1. Bokalak*

#### 3.2.1.1. Bokal luzeak

Mendebalde eta erdialdeko hizkera arkaikoek bokal luzeak —edo bikoitzak, bietara interpreta baitaitezke— dakartzate lexemetan, flexioan eta elkartu-eratorrietan.

Lehenik, lexemetan bokal arteko hasperenaren erorketaren ondorioz sorturikoak daude —*RS* 399 *zaarra* 'zaharra', 558 *ylbeeran* 'hilbeherean', Last 30 *leen* 'lehen',

Zum 13 *mjiocayti* 'mihiokaitik', SalmMis 85 *chaala eta aaria* 'txahala eta aharia'—, baina (-rez amaitu monosilaboez landa) baita arrazoi ilunagoengatik agerturikoak ere (*RS* 400 *haarra* 'harra', 45 *laarric* 'larrik', Zum 1 *alaan*, Zar 19 *bixooc* 'biok', Utrg *ala fedee*). Halaber, elkartu-eratorrietan juntatzen diren bokalak bakundu gabe dira: *RS* 238 *ataartean* 'ate artean', 557 *labaaldian* 'labe aldian', 292 *ollaarra* 'oilarra', ArrErr 12 *arabaarric* 'arabarrik'.

Flexioari dagokionez, deklinabidean *-aan* eta *-aak* atzizkiak ditugu, *-a*z bukatu izenei *-an* inesibo singularrekoa, edo *-ak* absolutibo eta ergatibo pluralekoak gehitzean: *RS* 214 *errecaac* 'errekak', 451 *marcaac* 'markak, itsasontziak', Zum 15 *gauçaac* 'gauzak', Laz A24:27 *arcaan* 'arkan'. Gisa berean, *-e-*z bukaturikoei *e-*z hasi atzizki bat eranstean —ad., *-en* gen. sing. eta pl., *-entzat* destinatibo sing. eta pl., *-etan* inesibo pl., *-etara* adlatibo pl.—, *ee* bokal bikoitzak agertzen dira: *RS* 286 *jaubeen* 'jaubearen', 51 *urdeen,* 266 *anajeençat* 'anaiarentzat', 391 *auereetan* 'abereetan', SalmMis 16 *maldadeetam,* Laz AL1146v *aldeetara.*

Halere, aztergai dugun garaian, bokal luze horien ondoan bakunak ere biltzen dira Mendebaldeko aldaera batzuetan, zehatzago, Ako eta Bren sartaldean. *RS*en 360 *quehea* / 473, 507 *quea,* 45 *laarric* / 30 *larra*, 292 *ollaarra* / 77 *ollar*, 399, 479 *zaarra* / 415, 482 *zarra* gisako txandaketak agertzen dira, eta Frantz 7 *pobreçan*, Sicu *çarra* biltzen dira lekukotasun txikiagoetan. Gisa berean, Lazarragak AL1143v *donzellaac*, 1144v *erropaac*, A23:53 *capaac*, B20:12 *quexaac* / AL1153r, B30:23 *armac*, AL1153v *ezpatac*, 1154v *bervac*, A8 *coplac* eta A7:107 *Domecaan*, A24:27 *arcaan*, B5:83 *plaçaan* / AL1145v *conquistan*, 1146r *figuran*, 1146v *probincian,* A27b:6 *ausencian* gisako aldizkatzeak ditu. Betolatzak eta Landuccik bokal bakunak baizik ez dakartzate, horrek erakusten baitu Arabako hizkera batzuetan berrikuntza lehenago burutu zela (Bet 95 *Arima santac*, 98 *obrac,* 94 *Elexa Santa Catolican*, Lcc 238r *errecac*, 290v *plaçan*). Erdialdean, bakuntzea ez zatekeen hasia, gutxienez hori iradokitzen du Gren lekukotasun arkaiko luzeena den *Salmo Miserere*ak.

Azkenik, ekialdeko euskalkietan bakunak arruntak dira eta bikoitzak salbuespen. GNz, bai flexioan, baita lexemetan ere —bokal arteko hasperenaren erorketaren ondorioz agertu bikoitzak— soilduak dira: Amdx 5 *honac eta ho(n)rrac*, ElizProz *çarrenac çarraynchu* 'zaharrenak zaharren gisan'. Halaber, L eta BNz *a* + *a* eta *e* + *e* elkarketek *a* eta *e* ematen dute hurrenez hurren, hala izenean, nola aditzean: Etxp I,222 *alabac*, I,266 *dezan,* III,6 *andrec* 'andreek', III,izenb *emazten* 'emazteen'. Delako bokal bakunaren gauzatze fonetikoari buruz, baliteke hizkera frankotan azentuduna izatea, azentua grafikoki markatzen duen Leizarragak askotan *á* eta *é* gisa irudikatzen baititu hauek: *Eliçá* (< *eliza* +*a*), *deçán* (< *deza* + *-an*). Halere, *ee* / *e* txandaketak dira aditzean: Mat XXVI,9 *çatequeen* / *Heusc çatequen,* Io XV,4 *deçaqueen* / Mrk VII,15 *deçaquen.*

### 3.2.1.2. Bokal batugabeak

Euskara Arkaikoan, flexioan eta eratorpenean elkartutako *a* eta *e* bokalak bildu gabe daude hizkera askotan. Oro har, B eta G arkaikoenak dira *ae* bokal-multzoa sistematikoki baitakarte: *RS* 278 *alargunaen* 'alargunaren', 514 *billaetan* 'biletan, bilatzen', Zum 18 *elexaen* 'elizen', 23 *onaena* 'onena', SalmMis 64 *alabançaen* 'alabantzen', Gar Cc79,LV *gaxtigaetan* 'gaztigetan, gaztigatzen', Frantz 3 *gordaetaco* 'gordetako, gordetzeko', SalmMis 45 *entrañaetatic* 'entrañetatik'. Halere, sartaldeko Bko lekukotasuna den *RS*en, *ae* bokal multzoaren soiltzea bidean da: genitiboan, *ae* beharrean *ee* dugu frankotan, *ae* > *e* aldaketaren tarteko urratsa (ik. 6. kap., § 3.2.1.2): 60 *laguneena* 'lagunarena', 458 *andreen* 'andrearen', 266 *anajeençat* 'anaiarentzat', 51 *urdeen* 'urdeen'.

A-ri dagokionez, joera desberdinak ditugu testuen arabera. Lazarragak *ae* multzoari atxikitzen dio, bai flexioan, baita eratorpenean ere: AL1147v *comarcaetaco*, 1151r *suplicaetan*, *andraen* 'andren'. Betolatzaren dotrinan, aldiz, *ae* multzoa hiru aldiz baizik ez da agertzen (99 *parcaetan*, 94 *juzgaetan,* 95 *salbaetarren*), eta gainerako guztietan *ae* > *e* aldaketa burutua da (96 *juzguetan*, *encerretan*, *ametan*, 97 *paguetea*, *esperetan*, *confessetea*, *domequetan*). Azkenik, Landucciren hiztegian, 303v *faldaetaco* edo 236v *cartaetan* bezalako adibide urrien ondoan, *ae* > *ai* aldaketa pairatu dutenak dira nagusi: 234v *antiçipaytea* 'antizipetea, antzizipatzea', 227v *apucaytea* 'apuketea, jazoera', 246r *desafiaytaco* 'desafietako, desafiatzeko', 261r *verbaytã* 'berbetan'.

Ekialdean berriz, lehen testuetarako *ae* > *e* aldaketa jadanik gertatua da. Bokal multzoaren adibide bakarra GNko testu batean aurkitu dugu, Eliz Prozesuan hain zuzen: *gauzaetan*.

### 3.2.1.3. Bokal sudurkariak

Euskara Arkaikoan bokal hotsok nolako hedadura zuketen erratea zaila da, dela idazleen, dela inprimategien erruz, gehienetan ez zirelako grafikoki islatu. Madariagak eta Gar.ek erakusten digute B arkaikoak bazeuzkala. Madariaga arratiarrak hainbat hitzetan /n/ sudurkaria bokaletan izkutaturik dela, eta hotsa <^> ikurrarekin irudikatu behar dela dio bere ortografian (*Honra de escribanos,* 1565).[123] Garibai arrasatearrak, berriz, *m īa* 'mihia' eta *arrayna* 'arraia' hitzak «sudurrarekin» ahoskatu behar direla azpimarratzen

123. «La N alguna vez se pronuncia escondida en las narizes, como en *orazioa, ardaoa,* y para denotar aquella *n* se deue sobre poner una cifra de esta manera a modo de nariz ^» (Madariaga 1565).

du,[124] eta han-hemenka tileta[125] erabiltzen haien irudikatzeko —*ardaõ* biltzen da errefrauetan (A27) eta *ardão* haren memorietan, Milia Lasturkoaren eresian—. Hortik, erran dezakegu zalantza askorik gabe *RS*eko ondoko hitzek ere delako ahoskera zuketela gutxienez: 46 *ardao*, *arzayoc* 386, 340 *dio*, 386 *gaztaeoc*, 3 *yguy*, 169 *mi* / 271 *miyac*. Halaber, pentsatzekoa da Lazarragaren eskuizkribuan bokal sudurkariak grafikoki ez islaturik ere, oraino bizirik zirela.

Beste aldaera dialektalei dagokienez, beranduagoko datuek gidaturik Z eta Err arkaikoek ere bokal sudurkariak zituztela ondorioztа dezakegu; bizkitartean, G, GN, L eta BNren kasuan, une honetan ez dugu aski daturik horrelakorik erabakitzeko.

### *3.2.2. Kontsonanteak*

#### 3.2.2.1. Hasperena

Euskara Arkaikoan, hasperena Ipar Euskal Herriko hizkera guztien fonema-inbentarioan dago; ezagunak zaizkion hiru testuinguruetan darabiltzate, hala nola hitz hasieran (*handi, hobe, huts*), bokal artean (*nahi, zahar, leiho*) eta ozen ondoan (*belhar, inhar, erho*). Gainera, /$p^h$/, /$t^h$/, /$k^h$/ herskari hasperendunak ere badituzte (*aphal, urthe, okher*).

Hego Euskal Herriari dagokionez, luzaz erran dena baino gehiago iraun zuela dirudi. Mendebaldean, Euskara Arkaikoaren bezperan oraindik bizirik zatekeen (xiv. m.) eta GNz, haren erabileraren froga argiak ditugu xiv (Mirones 2009) eta xvi. mendeetan (Maiora 2011), eta azken arrastoak xvii.ean, Beriainen erakusleetan (*ohec, orihec, ayhec*) (Manterola 2015).

#### 3.2.2.2. Txistukariak: frikariak eta afrikatuak

Gorago azaldu bezala (§ 3.1.3), Euskara Arkaikoan autore gehienek bizkarkari eta apikari frikari eta afrikatuak ez zituzten grafikoki bereizi; hortaz, ez da bistakoa *n, l* edo *r* ozenen ondoko txistukariak nola ahoskatzen ziren.

---

124. «Aquella dicion *miña,* que significa lengua, se ha de pronunciar algo con las narizes, supliendo la *n* de la tilde con ellas, cosa muy usada en esta lengua en muchas diciones, porque si se escribiese con la *n,* diria *mina*, que significa *dolor* y *amargura*.» (Garibai 1591-92: 71); «*Arrayna* se ha de pronunciar con las narizes sonando la *n* de la tilde, porque *arrania* no quiere decir nada, y *arrayna* significa pescado en general» (15).

125. Garai hartan oso ohikoa zen tileta edozein bokalen gainean jartzea, V + /n/ zein /m/ segidak seinalatzeko: Frantz 1 *borõdate* 'borondate', *eguitẽ* 'egiten', *prometietã* 'prometietan', Sicu *alcãdorea* 'alkandora', Bet 92 *Iaũgoycoac* 'Jaungoikoak', *libradu gaguizã* 'libradu gagizan', Amdx 3 *Jãgoycoagana* 'Jangoikoagana'. Haietan denetan, hala V, nola /n/ edo /m/ kontsonanteak ahoskatu behar dira, eta nehola ere ez V sudurkaria; cf. 45. oh.

Halere, banaketa grafikoa dakarten testu urriak laguntza handikoak gerta daitezke joera orokorren berri izateko. Denek, ekialdeko zein mendebaldeko, bizkarkari eta apikari frikaria idazten dute ozenaren ondoan. Landucciren hiztegiko A eskuak <ç> erabiltzen du *n, l* eta *r* ondotik —eta ez <sç>—: 295v *çamalçaya,* 241v *olçac,* 298*, ençun,* 299v *arça*. Etxeparek ere frikari eta afrikatuak grafikoki bereizten dituen zatietan —prologoa eta XIV eta XV. poemak— frikaria idazten du ozenen ondoan: XIV,40 *dançara,* XV,4 *baitinçan,* Prol *goraynci, abançatzeco,* XIV,8 *berçe*. Azkenean, Leizarraga, txistukarien banaketa grafiko hertsia ekarri zuen lehenak, frikaria hobesten du *n* eta *l* ondotik, baina frikari zein afrikatu *r* ondotik: Mat XVI,5 *ahanz,* VIII,24 *estalzen* XXVII,30 *ceraunsaten,* IX,4 *pensatzen*, XXVI,60 *falsu,* II,12 *berze,* XXV,20 *borz* vs I,18 *sortzea,* XXVI,31 *artzaina*. Ororen buru, lekukotasun horiek gogoan, pentsa liteke euskalki arkaikoetan txistukari bizkarkari eta apikariak frikarien alde neutralizatzen zirela *n* eta *l* ondoan.

Sabaikariaurrekoari dagokionez, joera desberdinak ditugu hizkeren arabera. Landucci eta Lazarraga arabarrek afrikatua, <ch> grafemaren bidez islatua, hobesten dute ozen ondoren: Lcc «chibo o cabrito, *anchuma*», «enxundia, *ganchaya*», «acuela, *azcolchoa*», «perrito de falda, *faldaetaco chacurchoa*»; Laz A7:117 *bervaxe*, A10:23 *gauçaxe*, A14:69 *presentexeac* vs A7:77, A29:62 *bercheac*, A7:88 *gueurcheoc*, A10:21 *daquidancheau*, A10:46 *neurcheau*, B3:42 *ebenche*, A27a:33 *areanche*. Ekialdean, berriz, frikariaren aldeko neutralizazioa dago. Leizarragak eta Zalgizek, frikarirako <ch> eta afrikaturako <tch> erabiltzen dutenak, beti <ch> dute *n* eta *l* ondotik: Leiz Apos XVIII,2 *aitzinchetic*, Luk XV,16 *maginchetaric*, Luk XIX,43 *trancheaz*, Zalg *cholchi* (baina *biritchi*, *bacoitchi*).

#### 3.2.2.3. Txistukariak: bizkarkari eta apikariak

Euskara Arkaikoak frikari bizkarkari eta apikariaren arteko nahasketaren lehen lekukotasunak dakartza, bai Bz (Abentx, Frantz, GA, *RS,* Sand, Zar, Zum) eta Az (Bet, Lcc),[126] baina baita sartaldeko Gz ere (SalmMis). Halere, apikariaren aldeko neutralizazio-prozesuaren hastapenetan dira hizkera gehienak (Zum, Sand, Gar, Frantz; Bet, Lcc; SalmMis): gertatzekotan, herskari aurrean baizik ez da gertatzen, hots, testuinguru ahulenean (Sand 12 *gasteluori*, Zum 11 *gustiocaz*, Frantz 1 *gustirean*, Bet 92 *gustia*, 94

126. Lazarragak frikari bizkarkari eta apikarien arteko oposaketa ongi markatzen du, eta haren eskuizkribuan dauden neutralizazio kasuak, Estibaliz Sasiolakoaren poemetan daude: B27:16 *esin*, B27:21 *es*, B27:25 *estaguiçula*, B28:2 *sure*, B28:3 *çaytesque*, B28:4 *sacusquedan*, B29:5 *estaqustanean*, B29:7 *estet*, B30:3 *lastanarequin*, B30:25 *equzten*, B31:3 *gustiac*, B31:4 *naguci*, B31:6 *equci*, B33:5 *lastan*, B33:13 *flordeliçac*, B33:15 *joci*, B33:18 *Guipuscoaco*, B33:20 *Gastelaco*, B33:35 *gustiac*.

*misericordiasco*, 97 *gustiz*, 98 *estaquianari*, SalmMis 34 *gusti gustiac*).[127] Azkenean, bitxi dirudien arren, Errodrigo Zaratekoaren eresia da Euskara Arkaikoan neutralizazioa aurreratuen daukan testua. Bokal artean izan ezik (Zar 6 *guiçon*, 8 *Cortaçarretarrac*, 21 *biçian*, *Urquiçuren*),[128] gainerako testuinguru guztietara hedatua da —hitz hasiera, hitz bukaera, kontsonante aurrea—: Zar 1 *dardos*, *canporacos*, 2 *estabe*, 4 *selan*, *sindean*, 5 *sanean*, *Abendañocogas*, 6 *ditus*, 9 *gastelan*, *es*, 12 *saldi suriac*, 14 *saldi*, 15 *urregorrisco*. Gainera hiperzuzenketa kasu bat ere badu: 3 *çeculaco*.

Bukatzeko, aztergai dugun garaian, ez da bizkarkari eta apikariaren arteko nahasketarik afrikatuetan (ik. 6. kap., § 3.2.2.2).

#### 3.2.2.4. Hitz hasierako herskariak

Aurreko kapituluetan ikusi bezala, latinari mailegatutako hitzek hainbat egokitzapen jasan dituzte euskararen barnean. Horien artean, hitz hasierako herskari ahoskabeak ditugu, garai zaharretako euskaldunek ahul gisa interpretatu eta ahostun gisa ahoskatuak (*pacem* → *bake; cellam* → *gela*).

Euskara Arkaikoan, salbuespenak salbuespen, hala jatorrizko hitzetako nola mailegu zaharretako hitz hasierako herskaria ahostuna izan ohi da ekialdeko testuetan: Etxp *becatu, gaztigatu* / *quirisaylu*; Leiz *bakea, barkatu, bazka /bazkatzen, bazko, bekatu, biztu, bortha, bothere, bozkario/boztu, bulka, denbora, dorre, gakoa, ganbera, gar, gaztigatu, gorputza, gorte* / *paradisuan, portalea, portu, kadena, kalte* (baina *galdu), kolpe*. Mendebaldean, aldiz, ahoskabearen erabilera hedatuz doa, nahiz mailakatzeak badiren hizkeren arabera. Landucciren hiztegian ahostuna da nagusi, Lazarragaren eskuizkribuan, berriz, ahoskabea. B arkaikoan eta zaharrean ere ahoskabearekiko aldaerak hedatuagoak dira. Ondoko taulak erakusten duen bezala, delako berrikuntza ez da hitz beretan gauzatua Bren eta Aren testuetan.

---

127. *RS*en apikaria hiru aldiz aurkitzen dugu hitz bukaeran: 252 *Asedenas aseden dayt*, 417 *Arozaren esea zozes, / zozes vere gaiches*, 320 *Obe da gorde çe es esque*. Halere, lehen adibidean neutralizazioa baino, aurreko txistukariarekiko asimilazioa dagoke aldaketaren oinarrian. Gainera, gogora dezagun gazt <s> grafema, <ç> edo <z> baino askoz arruntagoa zela hitz bukaeran, eta ohitura grafiko horrek ere zerikusia izan dezakeela adibide hauetan <s> grafemaren hautuarekin.

128. Zar 19 *Echosu* 'itxoizu' da salbuespen bakarra.

2. TAULA. HERSKARIAK HITZ HASIERAN

| Bizkaiera Arkaiko eta Zaharra | Landucci | Lazarraga |
|---|---|---|
| *bulç-* (bizk. mod.) | *pulçatu* | *pulçatu* |
| *dempora* (Mik, Kap, *VJ*) | *temporea* | *temporea* |
| *gilça* (Gar, Mik) | *quilçea* | *quilça* |
| *gorringo* (Mik) | *corrincoa* | |
| *gasta-* (Kap) | | *castaetan* |
| *golpe* (*BB*) | | *golpe/colpe* |
| | | *pilox* |
| | | *posa* |
| | | *tenda* |
| *pecatu* (Bet, Mik, Kap, *VJ*) | *becatua / becataria* | *becataria* |
| *tilista* (*RS*) | *dilistea* | |
| *titarea* (Mik) | *ditarea* | |
| *titia* (Mik) | *ditia* | |
| *calte* (*RS*, Kap) | *galtea* | *calte* |
| *guibel* (*RS*) / *quibel* (*RS*) | | |
| *catigu* (Kap) | *gatigu* | |
| *coypea* (Mik), *coypasu* (*RS*) | *goypea* | |
| *castigadu* (Kap) | *castigadu* | *gaztigadu* |
| *querrexeá* (Mik) | *querexea* | |

### 3.2.2.5. HITZ HASIERAKO DARDARKARIAK

Euskaraz dardakariak ezin daitezke hitzen edo erroen hastapenean ager. Hortaz, latin-erromantzeari mailegatu hitzak murrizketa horren arabera egokitu behar dira. Mendebaldean, *e-* gehitzen da dardarkariaren aitzinean, ekialdean, berriz, *a-* zein *e-*: *San Frantz erregnua, erreguela*; Lcc 311 *erregaytan dana* 'regadio', *errnegaytan deuena* 'renegador'; Bet *errezadu, erregutu, erresuzidadu*; Zum *errendaturic, erreglaturic, erregue, errequericia;* Gar *errentea*, *Erroango, erregue*; Laz *errastruan, errazoa, erreal/real, erregidu, erregu, errege, erreinu, errespuesta/respuesta, errodela, erromeria, erropaac*; Leiz *errota, errekeiturik, arraza, arrangura, arropa, arrasatu*; Etxp *arrobatu, arranguren*; Etxz *arropa, arreposturic*; Oih *errekeita-, arraza*.

Halere, izan dadin kultismoagatik edo mailegua ez delako guztiz barneratu euskararen hiztegian (Lcc, Etxart, Ros), protesirik gabeko aldaerak ohikoak dira autore batzuen lanetan: Lcc 309 *rançio daucana*; Laz *rabel, rebelde, reberencia, recetea, recojidu, regimentua, remediadu, repara, respuesta/errespuesta, real, ribera, rondadu;* SalmMis *renoba;* Leiz *regea, refusatu, resuma, resuszitatu, Roma*; Etxep *remedio, remeditu, refugio,*

*respuesta, recebitu, rigorosqui;* Etxart *requeritzen, recebitu, rezumen, remedio, remititzez, regnotic, repozic/repos, respostu, razon, reparacione, reffuza, reciproque, regalez;* Ros *respostu, reçevitu, respondatu, revocazeco, referizen, recoba, remedia.*

#### 3.2.2.6. Sabaikaritzeak

Lehenbiziko testuetatik, beheranzko diptongo zahar baten ondotik, txistukariak eta *n* sudurkaria automatikoki palataltzen dira Mendebaldeko hizkera gehienetan: Lazarraga *oñetara, erreñuetan, ceñetan, gaxtoto, gaxqui, noxbait, nax(ala), gañean, achez, axeac, muñ, bacoch, echi, soñac, nachaçu; RS nax, nox, ax, ajea.* Halere, Laz *naiz, deiçut* adibideek iradokitzen duten bezala, bilakabidea ez zatekeen oraindik erabatekoa.

#### 3.2.2.7. Vb,d,gV > VØV / VØV > VgV

Mendebaldeko hizkera zaharretan (B, A), arrunta da *g*-ren erorketa bokal artean (cf. Mitxelena 1990: 227): *eçaundu* 'ezagutu', *alaune* 'alhagune, bazka leku' (*RS* 152) aldaerak ditugu Bizkaiko testu zaharretan, edo *asçeyn eguin* 'complazer', *Erroma arguiçaya* 'çera colorada', *abere nausia* 'ganado mayor', *vide nausia* 'camino real' eta *-tei* 'tegi' eta *-ao* '-ago' atzizkiak (*arteya* 'aprisco de ouejas', *errlateya* 'colmena' ; *andiaoa* 'mayor', *ez queao* 'abastar') Landucciren hiztegian. Alderantzizko gertakaria ere —erran nahi baita bi bokalen artean *g* tartekatzea— lekukotzen da lehen testuetatik, esate baterako Lcc *segui* 'sehi', edo Etxart zuberotarraren *regal* 'erreal'.

## 3.3. Izenaren morfologia

### *3.3.1. Artikulua*

Euskara Arkaikoko testu guztiek artikulua dute. Halere, franko berezia da euskara modernoarekin konparaturik: haren erabilera-eremuak beranduagoko euskaran baino murritzagoak dira, eta, forma bat baino gehiago da banaketa osagarrian (Manterola 2015).

Singularrean, *-au (-or), -ori* eta *-a* artikuluak ditugu, *hau(r), hori, har-* erakusle singularretarik eratorriak, hurrenez hurren: Zum 22 *gure llobau* 'gure iloba', Bañ 1, Abend 3 *oñetaco lurrau* 'oinetako lurra', Bet 92 *ni becatariau* 'ni bekataria', ArrErr 26 *lasterreon* 'lasterrean', Zum 10 *eseorj* 'etxea', 20 *ese jauxi oRi* 'etxe eroria', Sand 12 *gasteluori* 'gaztelua', Laz AL1152v *çeure buruori* 'zeure burua', Urr *sendo cenduan odolori biurtu jaçu* 'sendo zenuen odola gatzatua bihurtu zaizu', Bet 97 *çuri Ayta espiritualorri* 'zuri Aita espiritualari', Bret 7 *conde andiorrec* 'konde handiak'.

Pluralean, berriz, 3. graduko erakusle pluraletik eratorritako *-ak* artikuluaz gain, *-ok* ere badugu, 1. eta 2. graduetako erakusle pluralak oinarri dituena: ArrErr 22 *Bergararroc*,

30 *Ganboarroc*, Zum 10 *gollaraoc* 'koilarok', 11 *gustiocaz*, 13 *mjiocayti* 'mihiok gaitik', 19 *fraydeon* 21 *neba arrebaoc*, 30 *maestruoc*, Last 34 *andraoc*, Bañ 2, Abend 4 *lau araguioc*, Sand 17 *argui izarroc*, Bet 93 *gu becatarioc*, 94 *Evaren hume desterraduoc*, *zeure vegui misericordiosoc*, Beot 3 *gipuzcoarroc*, *Nafarroquin*, Bret 4 *oñaztarroc*, SalmMis 79 *murallaoc*.

Artikulu horien banaketa dialektalaz den bezainbatean, singularreko hiru artikuluak B (Abend, ArrErr, Bañ, *RS,* Sand, Urr, Zum), A (Bet, Laz) eta Gzko (Bret, SalmMis) testuetan aurkitzen ditugu. GNz (Esp), Lz (Leiz) eta BNz (Etxp), berriz, nagusiki *-ori* eta *-a* 2. eta 3. graduko erakusleetatik eratorriak dira: Esp 5-7 *Mariorj*, 8-10 *Joanisori,*[129] Etxp III,58 *guiçonorrec* 'gizonak', IX,33 *larruyori*. Lehen graduko erakusletik eratorri adibide bakarra Leizarragaren testuan aurkitu dugu: Leiz Luk XV,13 *seme gaztenor* 'seme gazteena'. Pluraleko *-ok* euskalki guztietan lekukotzen da, BN (Etxp VII,18 *bioc,* IX,30 *çure pena dioçunoc,* X,5 *laydoc*) eta L barne (Leiz Mat XIV,16 *ceuroc*, Mat XXIV,34 *gauça hauc gucioc*, Luk XXII,71 *geuroc*).

Azkenik, *a* + *a* > *ea* disimilazioa, edo *-a*z bukaturiko izenei[130] artikulua gehitzean *ea* bukaera agertzea, ohikoa da jada[131] Euskara Arkaikoaren zenbait hizkeratan, hala nola mendebaldekoetan —B (Abentx, Frantz, Last, Zar, *RS,* Sicu, Zar, Zum), A (Bet, Lcc, Laz)— eta sartaldeko Gz (SalmMis).[132] Zehatzago, absolutiboan (Zum 4 *taçea*, Last 31 *cartea*, Zar 16 *carrerea*, Sicu *alauéa*, Laz AL:1144r *damea*, 1143r *cantaetea*), ergatiboan (Bet 92 *santeac*, *RS* 220 *iazquereac*), datiboan (Frantz 2 *Virgineari*), genitiboan (Zar 17 *arrebearen*), inesiboan (Bet 94 *parcazionoean*, *erresurrecciñoean*), soziatiboan (Zum 36 *naturaleagaz*, Bet 92 *santeagaz*), eta instrumentalean (Abentx *saguiteas*) aurkitzen da. Halere, lekukotasunen urritasuna dela kausa, ezin dugu erran delako disimilazioa singularreko paradigma osora hedatua zen hizkera guztietan. Dirudienez, Lazarragarenean besteetan baino indartsuago zen, *au* artikuluarekiko disimilazio kasuak (*-a* + *-au* > *-eau*) biltzen direlako (AL1143v *esperanceau*, 1144v *dagueau*, 1152r *peneau*),

---

129. Espartzako ezkontza-fedean aurkitutako bi adibide horiek bereziak dira artikulua jasotzen duten izenak izen bereziak direlako. Halere, Euskara Zaharreko lekukotasunek iradokitzen duten bezala, GN arkaikoan izen arruntekiko erabilerak ere baziratekeen (ik. 6. kap., § 3.3.1).

130. Hizkera hauetan, delako disimilazioa aditz jokatuetan ere gertatu da, *-a*z bukatu adizkiei *-an* eta *-ala* atzizkiak gehitzean, hain zuzen: *çirean* 'ziren' (ArrErr 25), *direala* 'direla' (GA A39), *çareala* 'zarela' (Laz AL1151r), *neroean* 'neroan' (B16:14).

131. Arau horren eraginez, *-ea* mugatua duten hitzak *-a* mugagabe gisa berranalizatu dira hizkera frankotan (Last 21-Bet 94 *andra*, Last 34 *andraoc*); horrek erakusten du XVI. menderako araua ongi errotua zela, eta hortaz, Euskara Arkaikoa baino lehenago sortua.

132. Euskara modernoan, aipatutako eremuez gain, GNko Burunda, Lana eta Ameskoan bildu da. Zoritxarrez, Euskara Arkaikoan ez dugu GNren aldaera horien lekukotasunik.

eta *-ia* bukaeradun izen mugatuek *-ia* + *-a* > *-iea* aldaketa pairatzen dutelako (AL1138v *historieac*, 1153v *sentenciea*, A6:30 *gueraciea*, A10:19 *licenciea*).

Etxeparek, berriz, *a* + *a* > *-ara* disimilazioaren berri ematen du (IX,32 *eguiara* 'egia'). Bizkitartean, delako arauaren adibide bat baizik ez da aurkitzen testu osoan, ondorioz, ezin dugu erran zaraitzueraren ezaugarri bereizletzat eman ohi den aldaketak nolako hedadura zuen BN arkaikoan.[133]

Bukatzeko, gorago erran bezala, Euskara Arkaikoak artikulua izanagatik ere, haren erabilera-eremuak beranduagoko euskaran baino askoz murritzagoak dira. Osagarri zuzena (1-3) eta atributua (4-11) frankotan artikulurik gabe agertzen dira euskalki arkaiko guztietan, orobat jatorria adierazten duen genitibozko sintagma (12-15). Alderantziz, Erdi Aroko euskararekin konparaturik, hedatuagoa da (ik. 4. kap.): ad., Picaud beilari frantsesaren hiztegitxoan (XII. m.) izen zenbakaitzak artikulurik gabe agertzen dira (*ogui, ardum* 'ardo', *aragui, araign, gari*), Von Harff bidaiari alemaniarrarenean (XV.a), berriz, artikuluarekin (*ogea* 'ogia', *arduwa* 'ardoa', *gaza* 'gatza', *oluwa* 'oloa') (cf. *TAV* 2.2.12 eta 2.2.18).

(1) **omenaje** eguingo joat biçia dodan artean (Zar 22)
(2) **Arguiçagui** eraiçeten (PatNos 4)
(3) Mutil honac buruan **zauri**, gaxtoac bernazaquian (*RS* 42)
(4) gure llobau bere **gujçon prestu** eguin da (Zum 22-3)
(5) Oric eztan erria, **ybarjaun** da açeria (*RS* 349)
(6) çe eyquec maurtuti hoeaneâ, **ederr** eztanic calean (*RS* 36)
(7) onac **arin**, gog[oa] **sendo**, arerioaen asean (Zar 13)
(8) Jauna, **garbiago** eguin naçaçu (SalmMis 7)
(9) çeure iz santuetan **justu** irten çençan (SalmMis 14)
(10) amorequin **cruel** dan[a]c (Laz AL1154r)
(11) çu serbiçeco **andi** dot deseoa (Laz A17:47)
(12) Ene andra Milia **Lasturco** (Last 13)
(13) Marina **Arraçolaco** (Last 15)
(14) Errodrigo **çarateco** (Zar 14)
(15) Jaun Peru **Abendañococ** (Abend 2)

### *3.3.2. Izenordainak*

Euskara Arkaikoak, modernoak bezalaxe, izenordain arruntak eta indartuak ditu. Arruntek, *ni*, *(h)i*, *gu*, *zu*, *zuek* paradigma dute, indartuek, berriz, *neu* / *neroni* / *nihaur*,

133. Picauden hiztegitxoan dagoen 'ecclesiam, *elicera*' disimilazioaren lehen lekukotasuntzat hartu ohi da. Baina hori ere zalantzazkoa da testuko bakarra izateaz gain, ez dakigulako zuzen informatzailea nongoa zen.

*(h)eu / heroni / hihaur*, *geu / geroni / guhaur*, *zeu / zeroni / zuhaur*, *zeuek / zuhaurek* euskalkien arabera. Aztergai dugun garaian, izenordain indartu zaharrenaren aztarnak badira hizkera frankotan, guk Lazarraga eta Leizarragaren testuetan, eta *Salmo Miserere*an aurkitu ditugu: Laz A9:11 *neurc*, A23:70 *ceur*, B15:81 *gueur* 'geu', SalmMis 12 *ceur,* Leiz Io III,28 *ceuroc*, Luk XXII,71 *geuroc.*

Genitibozko izenordainei dagokienez, euskalki arkaiko guztietan *ene* da 1. pertsonako izenordain bakarra —*nire* formaren 1. agerraldia XVIII. mendekoa da (bazterreko eta urri oraindik hamarkadetan)—. Indartuetan berrikuntzak badaude GNz eta Gz, *eu* > *e* diptongoa soildu baita: GurAit *guere* 'gere, geure', SalmMis 9 *nere* 'neure'.

### *3.3.3. Deklinabidea*

Lehen testuetako deklinabide sistema gaur egungoaren parekoa da, ordurako, kasu eta postposizio gehienak sortuak eta finkatuak izanik. Gainera, antzeko aldakortasun dialektala da ergatiboan, soziatiboan, datiboan, instrumentalean, bizidunen leku-kasuetan eta hurbiltze-ablatiboan.

Ergatiboarekin hasteko, ekialde zabalean (GN, L, BN, Z) sing. eta pl. bereizten dira (*-ak* /*-ek*: Zalb 9 *garaçicoec*); mendebalde zabalean (B, A, G), berriz, *-ak* baizik ez da bietarako (Zar 3 *çaratearrac galdu ei dabe Marquia-çuya çeculaco*).

Gero, soziatiboan, L (Leiz Luk IX,32 *harequin*) eta G *-kin* (Bret 4 *Gamboarraquin* 'ganboarrekin', 9 *chipiaquin* 'txikiekin')*,* GN *-ki* (Amdx 14 *elcarrequi*, 15 *gusiequi*), eta BN *-ki* (Etxp III,6 *guiçonequi*) eta *-kila* (Etxz 2 *hunequila*) daude. Mendebaldean *-gaz*, nahiz *-kin* ere ohikoa den aldaera batzuetan. Oro har, B (*RS,* ArrErr) eta Aren (Bet) sartaldeko hizkeretan *-gaz* baizik ez da lekukotzen singularrean eta *-kaz* pluralean (ArrErr 35 *beragaz* 'harekin', 29 *armacaz* 'armekin'). Erdialde eta sortaldeko hizkeretan, berriz *-(g)az* zein *-kin* erabiltzen dira, Lazarraga eta Landucciren ondoko adibideek erakutsi bezala: Laz AL1143v *emazteagaz*, 1151v *berbaocaç*, A5:25 *çurequin*, 1152r *ardiaquin* 'ardiekin'*,* Lcc 239v *tastauiaz* 'daratuluarekin', 234v *veguiaz* 'begiekin'.

Datibo pluralean hiru aldaera dira: mendebaldean *-ai* (Laz AL1144 *musicoay* 'musikoei'), erdialdean *-ei* eta ekialdean (BN eta Z) *-er* (Etxp III:39 *guiçoner*).

Leku-kasuei dagokienez, bizidunekin, mendebaldeko egileek *-gan* darabilte, ekialde zabalekoek (GN, L, BN, Z), berriz, *gan* zein *baita* (Etxp V:25-6 *nigana*, II:128 *semiaganic*, I: 204 *hura baitan*, IX: 26 *ni baytara*; Zalb *erregue baytaric*).

Lehenbiziko testuetatik, hegoaldeko GN gainerako hizkeretatik bereizten da instrumentalaren forma dela-eta. Hark *-s* du, besteek *-z*: Amdx 7 *gutis*, 10 *aldias*, 12 *garitates*.

Azkenik, Euskara Arkaikorako, mendebaldeko hizkerek jada badute hurbiltze-ablatiboa: *RS*en *-ranz* dugu (456 *azeranz*), Lazarragak eta Landucciren hiztegiko A eskuak

*-rutz* (AL1151v *erri aetaruç* 'herri haietarantz', 1153v *canpuruç* 'kanporantz'; Lcc 280r *asçerusç* 'atzerantz', *barrurusç* 'barrurantz'), B eskuak, berriz, *-ronz* (280r *aronz* 'harantz').

Atal honetan, ondoko mendeetan aldaketa handiak nozitu dituzten kasuak baizik ez ditugu xeheki aztertuko, genitiboa eta ablatiboa, hain zuzen.

### 3.3.3.1. Genitiboa

Euskara Arkaikoan, euskalki guztiak ez datoz bat honen formetan. Erdialde eta ekialdeko hizkerek *-aren* dute singularrean, eta *-en* pluralean: SalmMis 40 *ondasunen*, 47 *semearen*, 69 *culpaen* 'kulpen', Leiz Luk VI,4 *Iaincoaren*, Mat X,2 *Apostoluén*.

Mendebaldeko testu gehienetan, berriz, *-aen* da singularrean (*RS* 278 *alargunaen* 'alargunaren', 484 *çequenaen* 'zekenaren', Mlast 1 *erdiaen* 'erdiaren', 23 *andiaen* 'handiaren', Zar 13 *arerioaen* 'arerioaren', 14 *urdinaen* 'urdinaren', Laz AL1143v *laztanaen* 'laztanaren'), eta *-en* pluralean (Zum 18 *elexaen* 'elizen') eta mugagabean (Laz AL1144r *Silveroen* 'Silveroren', *RS* 117 *ascoen* 'askoren'). Halere, *-aren* singularreko atzizkia ez bide zitzaien guztiz ezezaguna, Lazarragagan eta *RS*en lekukotzen baita *-aen* maizagoaren ondoan: Laz AL1144r *amaren*, A24:44 *ezconduaren*, *RS* 41 *nequearen,* 268 *eguitayaren*.

Ondoko garaian, gorago aipatu *-ae* > *-e* bokal multzoaren soiltzearekin batera, singularreko *-aen* atzizkia *-en* bihurtuko da Bren hizkera guztietan, eta hortaz, sing. eta pl. arteko bereizketa morfologikorik gabe geldituko, —ziurrenik azentuaren bidez bereizten ziren, hizkera modernoagoetan bezala— (ik. 6. kap., § 3.3.3.1). Aldaketa horren lehenbiziko zantzuak *RS*en aurkitzen dira, singularrean, *-aen* edo *-aren* beharrean, *-aen* > *-en* aldaketaren tarteko urratsa den *-een* erabiltzen baita han-hemenka: *RS* 60 *laguneena* 'lagunarena', 413 *gazteen* 'gaztearen'.

Azkenik, delako bokal-soiltzea bururaino eramana da Betolatza eta Landucci arabarren testuetan: hala singularrean nola pluralean, *-en* eta *-an* darabiltzate, hurrenez hurren (Bet 92 *Aiten da semen* 'aitaren eta semearen', *Espiritu Santuen* 'espiritu santuaren', *pecatuen* 'bekatuaren'; Lcc 272v *arrayan agarra* 'arrainaren hezurra', 301v *abelçayan gauçea* 'abeltzainen gauza').

### 3.3.3.2. Ablatiboa

Ablatiboa dateke Euskara Arkaikoan aldakortasun dialektal handieneko postposizioa. Mendebaldeko hizkerek (B, A), *-rean* eta *-(r)ik* dute singularrean. Halere, ohartzekoa da *-rean* morfemaren erabilera-esparruak mugatuak direla, bizidunak, leku-izen bereziak eta denbora adierazten duten sintagmak beti *-(r)ik* atzizkiaz jantzirik agertzen baitira: Last 9,27 *cerurean* 'zerutik', Frantz 1 *gustirean* 'guztitik', Bet 94 *arterean* 'artetik', Laz

AL1153v *espilurean* 'ispilutik', Lcc 260r *lequrean* 'lekutik', *RS* 360 *surean* 'sutik', ArrErr 19 *Maloguenic* 'Malogendik', Laz A17:68 *çureganic* 'zuregandik', *RS* 243 *guextoaganic* 'gaiztoagandik', Bet 92 *bioz gustiric* 'bihotz guztitik', *RS* 542 *Vrrineric* 'urrundik'. Bi forma hauez gain, Lazarragak *-reanik* pleonastikoa ere badakar: AL1145v *lecureanic,* A24:130 *arereanic*. Pluralean eta mugagabean, mendebaldeko autore arkaikoek *-tarik* atzizkia darabilte: Bet 92 *verba deûguetaric*, *gueure arerioetaric*, Laz AL1152r *beguietaric*, 1142v *escuetaric*. Horren salbuespen bakarrak, *RS* eta Laz-ren mugagabearen adibide bana dira, *-tarean* atzizkidunak: Laz A29:60 *jagui cidin / afaritarean tristeric*, *RS* 228 *Matrazu orrec hurte ez eban carcaj orretarean*. Azkenik, mendebaldeko hizkerotan, *-ti* (sg) eta *-tati* (pl, mgg) atzizkiek prosekutiboaren balioa ('non zehar') dute, eta nehola ere ez ablatiboarena: *RS* 36 *Ce eyquec maurtuti hoeaneâ ederr eztanic calean* 'ez egik basamortuan zehar ohanean eder eztenik kalean', Laz B18:85 *baguioancen arerean / floresta baten erditi* 'bagindoazen handik / oihantxo batean zehar', B18:126-7 *Basoetati ebili naiz, / ez erri celaietati* 'Basoetan zehar ibili naiz, / ez herri zelaietan zehar'.

Erdialde eta ekialdeko hizkera arkaikoetan, prosekutiboaren eta ablatiboaren arteko oposaketa galdua da, eta *-ti(k)* da forma nagusia. Zehatzago, Gk (SalmMis), BNk (Etxp, Etxz) eta Lk (Leiz), *-tik* erabiltzen dute singularrean: SalmMis 32 *vistatic*, Etxp I,432 *escutic*, Etxz 6 *hortic*, Leiz Mat XIX,20 *gaztetassunetic*. Honez gain, *-tika*[134] eta *-tikan* aldaerak agertzen dira Etxepareren testuan eta Bretainako kantuan, hurrenez hurren: Etxp III,48 *cerutica*, Bret 5 *Vizcaitican*. Zuberotarrek *-ti* dute —Zalgizek hura bakarrik, Oihenartek *-ti* zein *-tik*—: Zalg 16 *beguira adi vr bareti / Nihaur niaitec lasterreti*, Oih *Prov* 418 *Zakuti bihia gal, edo zorroti irina, da galtze bardina*. Haatik, *-(r)ik* atzizkia oso bakana da singularrean erdialde eta ekialdeko testuetan. *Salmo Miserere*an*, -tik* nagusiaren ondoan, *-rik*-en adibide bakarra da (24 *erruric* 'errutik'). Halaber, Etxepareren obran hiru aldiz baizik ez dugu bildu, eta Leizarragak soilik leku-izen bereziekin erabiltzen du: Etxp I,384 *Beccaturic garbizaçu othoy gure arimac*, Leiz Akt. XVIII,5 *Macedoniaric*. Halere, singularretik kanpo ez da hain eihartua. Bizidunekin, hala erdialdekoek, nola ekialdekoek *-(r)ik* baizik ez dute: Zalb 89 *erregue baytaric*, SalmMis 42 *Niganic*. Gainera, ekialdeko hizkeretan *-tarik* pluraleko eta mugagabeko forma bakarra da: Etxp III,33 *gizonetaric*, *discipuluetaric*, Oih *Prov* 321 *nabusitarik; -tarika* adibide bat GNz *gaiçetarica* (GurAit). Azkenean, G da berritzaileena, sing. *-tik* eta pl. *-tatik* darabiltzalako: SalmMis 58 *becatuetatic*. Halere, gorago aipatu *-rean* atzizkiaren aldaera den *-ren* morfemaren lekukotasun zenbait dugu XVII. mendeko bi testutan, Azkoitiko *Sumario Breve*an (1614), eta Tolosako bertso iraingarrietan (1619): 22 *escuren* 'eskutik', *inkonbenienteren batzuk*

---

134. Landucciren B eskuak ere *-tika* morfema behin idazten du (263r *lecutica lecura*), gainera, ablat. balioarekin.

'inkonbenientetatik b., inkonbeniente b.'. Horrez gain, gaur egun oraindik *ondoren* erabiltzen du —bizkaitarrekin batera— ekialdekoen *ondotik* adberbioaren baliokide gisa. Zalantzarik gabe, agerraldi horiek erakusten dute garai batean *-rean* morfema XV-XVIetako testuek lekukotua baino zabalduagoa zela.

### 3.4. Aditzaren morfologia

Euskara Arkaikoaren aditz-sistemaren hezurdura nagusia egungoaren oso antzekoa da: aditz jokatugabe berak erabiltzen dira, aditz trinkoak eta perifrastikoak aldizkatzen denbora-modu-aspektu ñabardurak adierazteko, perifrasi gehienek euskara modernoan dirautelarik. Gisa berean, handik hona aditz jokatuen morfologiak ez du aldaketa handirik nozitu: ergatibo, absolutibo, datibo argumentuak aditzean islatzen dira, gainera, gaur egungo morfema beren bitartez, alokutiboaren sistema eratua da (hika, zuka), eta hasieratik polimorfismoa dugu hirupertsonaletan (*-i(n)-, *eradun, *edutsi*) eta moduzko perifrasi iragankorretan (**ezan, egin, *iro, -idi-*). Ororen buru, forma berak ditugu, eta bakoitzaren banaketan, funtzioan eta hedadura-mailan dautza Euskara Arkaikoaren aditz-sistemaren berezitasunak.

Atal honetan, aditz jokatugabeei (§ 3.4.1) eta jokatuei (§ 3.4.2) buruzko ohar batzuk ekarri ondoan, denbora, aspektua eta moduaren adierazpideen deskribatzeari ekingo diogu (§ 3.4.3). Azkenik, aditzen erregimena (§ 3.4.4) eta komunztadura arazoak aipatuko ditugu (§ 3.4.5).

#### *3.4.1. Aditz jokatugabeak*

Euskara Arkaikoan —egungo euskaran bezalaxe— lau aditz jokatugabe erabiltzen dira: aditzoina, partizipioa, aditz-izena eta partizipio prospektiboa. Atal honetan, bakoitzari buruzko oharrak eskainiko ditugu, gure arreta formetan eta erabileretan finkaturik.

Aditzoina euskalki arkaiko guztietan erabiltzen da, baita ondoko mendeetan partizipioaren onetan osoki ordezkatuko duten mendebalde eta erdialdeko hizkeretan ere (ik. 6. kap., § 3.4.1). Halere, lehen testuetarako, *-i* partizipio-markadun aditzoina erabat desagertua da Araban eta Bizkaian (*RS* 513 *ezer yrabaci ez neçan*, GA G139,11 *Gastac aguiri çitecen*,[135] eta *-tu* partizipio-markadunena partizipioak ordezkaturik agertzen zaigu han-hemenka **edin* laguntzailearekiko perifrasian (*RS,* Zum, Lcc, Laz): Zum 36 *olaoc bere gujadu bite ondo*, *RS* 553 *garrastu adi icasterren*, Laz AL1142v *escatu cidin arpa bat*.

135. *RS* 101 *Eros aala*, 136 *az ezak* dira aurkitu ditugun salbuespen bakarrak (Mounole 2007: 84).

Partizipioari dagokionez, *-i* markaren emankortasun-galerarekin, *-tu* partizipio zahar zenbaitetara hedatua da: Laz *ançitu* 'ahaztu', *ocitu* 'hoztu', *mocitu* 'moztu'; Lcc *balçitu* 'belztu'. Delako berrikuntza nagusiki mendebaldeko hizkeretan lekukotzen bada, ez dezagun ahaztu Etxeparek II,130 *haritu* duela, *hartu* partizipioaren tarteko forma (**hari* > *haritu* > *hartu*). Azkenik, lehen testuetarako, mendebaldeko hizkerek partizipio mailegatu zaharrak eta berriak —hots latinari eta erromantzeari hartuak— formaz bereizten dituzte, 1.ak *-atu* / *-itu*, eta 2.ak *-adu* / *-idu* morfemez jantziz: Lcc 239v *bañatu*, 282r *vnditu*, Laz A28:7 *gueratu*, *parcatu* / B12:34 *gujadu* 'gidatu'. Lazarragaren eskuizkribuko Sasiolakoaren poemetan, berriz, ustez erromantzeari mailegatu partizipio batzuek *-atu* bukaera dute: besteak beste, B31:7 *canbiatu* (Lcc «cambiar, *cambiadua*»), B27:4 *notatu*, 10 *miratu*, 20 *largatu*, 24 *alvergatu*.

Euskara Arkaikoaren aditz-izena franko urrun gelditzen da geroko euskararen aditz-izenetik. Lehenik, dialekto guztietan, partizipioa *-i* morfemaz duten aditzek *-te* atzizkia hartzen dute aditz-izena sortzeko (*ekarri* → *ekarte, etorri* → *etorte*). Partizipio markarik ez, eta *-n* kontsonanteaz bukatzen diren aditzek ere *-te* atzizkia jasotzen dute horretarako (*jan* → *jate, edan* → *edate*). Bizkitartean, batzuek, *-te* bukaera soila beharrean, *-ite* dute (ArrErr 50, Zum 18, Bet 94 *emayten*; Bak, Frantz *yçayteco* 6), ondoko mendeetan soilik ekialdeko hizkeretan gordeko dena (ik. 6. kap., § 3.4.1). *-tu* partizipioa duten aditzei dagokienez, ekialde eta erdialdeko hizkerek *-tze* darabilte aditz-izena egiteko (Etxp II,133 *sofriceco,* Leiz Mat XIII,19 *harrapatzen*); mendebaldekoek, berriz, *-eta* (Laz A17:89 *sentietan,* AL1153v *pregonaetan*) eta *-keta* (Laz A17:9 *aguinquetan,* Last 7 *apaynquetan*), nahiz *-tze* atzizkidun batzuk ere biltzen diren *RS*en eta Lazarragaren eskuizkribuan (*RS* 352 *ycaraçen, bigunçen*, Laz A17:7 *aguincen*, 90 *sentiçen*). Gainera, B eta Azko testu batzuetan (ArrErr, Laz, Lcc) *-tzaite* erabiltzen da silaba bakarreko oinarriekin (ArrErr 27 *çarçayqueran* 'sarreran', Laz A8:24 *quençaiteco* 'kentzeko', Lcc 253v *losçaytecoa* 'lotzekoa', 247v *baçayten* 'batzen').

Azkenik, geroaldiko perifrasian erabili ohi den partizipio prospektiboa partizipioaz eta *-(r)en* edo *-ko* morfemez osatzen da. Euskara Arkaikoan, mendebalde eta erdialdeko hizkera guztiek *-ko* morfemaduna baizik ez darabilte (Laz A24:17 *joco*, *RS* 316 *erabilico,* SalmMis 25 *yçango*). L, BN eta Zko testuetan, berriz, *-(r)en* atzizkidun formak dira ohikoak (Etxp I,316 *iarriren*; Zalg 147 *erranen*; Bela 3 *utciren*), Oihenart eta Leizarragaren salbuespen bakanak kendurik —*Prov* 231 *hautsiko*, Mat XXIII,36 *etorrico*. GNz, ez da atzizki bera erabiltzen hizkera guztietan: Amenduxen bertsoetan partizipio prospektiboa -(*r)en* atzizkiaz janzten da (Amdx 11 *isanen,* 14 *baturen*), *Credo*an eta Sorginkeria auzietako esaldietan, aldiz, *-ko* morfemaz (Cr *etorrico*, Sorg *erreco, biribilcatuco*).

Ondare zaharreko aditzek *e-* aurrizkia dute euskalki guztietan, eta bakanak dira ondoko bokal itxiarekiko asimilazioz gertatutako *e-* > *i-* aldaketak: *ebil-* (*RS,* Laz, Leiz,

Etxp, Zalg), *eduki* (Leiz, Etxp), *ekus-* (*RS,* Etxp, Laz, Bet) vs *ikus-* (Leiz, Etxp, Laz), *ifin-* (*RS,* Laz). Halere, bada autore beraren testuan bi formak dituenik: *ekus-* eta *ikus-* Etxepare eta Lazarragaren idatzietan, eta *efin-* eta *ifin-* 2.arenean. Zalantzarik gabe, txandaketa horiek aldaketa bidean zegoela erakusten dute.

### *3.4.2. Aditz jokatuen paradigmak*

Atal honetan, aditz jokatu arkaikoaren zenbait berezitasun ekarriko ditugu XV eta XVI. mendeetako testuak ongi ulertzeko ezinbestean ezagutu behar direlakoan. Haietarik batzuk Euskara Zaharrean oraindik bizirik badiraute ere (ik. 6. kap. § 3.4.2), beste batzuk garai honen bereizgarri dira (beheragoko (b), (d), (f) ezaugarriak).

A) *Zuek* PERTSONAREN ADITZ-KOMUNZTADURA

Euskara Arkaikorako, *zuek* pluraleko 2. pertsonaren izenordaina sortua da,[136] bizkitartean, Az (Laz) eta Bz (IC, *RS*) oraindik *-zu* da haren komunztadura-atzizkia. Bestela erranik, 2.p. pl.eko izenordain berria sortuagatik, berrikuntza ez da aditzera hedatu, eta iraganeko pluralaren (*zu*) komunztadura-morfema mantentzen da. Ondoko garaietan ere biltzen dira komunztadura berezi honen lekukotasunak (ik. 6. kap., § 3.4.2):

(16) Oñez **eguyçu**, oñez daigun guchitan ! que […] quiere decir 'a plaços o quedaos en pie' (Arriolabengoa 2008: 294)
(17) ansí les dezía a los suyos en bascuençe: Au il **eguidaçu**, uillau au il **eguidaçu** (Arriolabengoa 2008: 295)
(18) Arren, choriac, exilic **çaoz**, / **badoçu** miramenturic 'arren, txoriak ixilik zaudete, / baduzue miramenturik' (Laz A10:1)
(19) çuec bere libertaduco **çara** 'zuek ere libertatuko zarete' (Laz AL1154v)
(20) Çuec jaquingo **doçu** ece Silvero çuec esan **doçun** arçai orregaz egon nax ni denpora andian 'zuek jakingo duzue ezen Silbero zuek esan duzuen artzai horrekin egon naiz ni denbora handian' (Laz AL1147v)

136. *Haiek* erakuslearen analogiaz sortua da, *zu* izenordainari *hek* erakusle plurala gehituz (**zuhek* > *zuek*) (Manterola 2015). Ez ahantz bi forma horien analogiaz agertu *guek* ere badela Araba aldean, Donemiliagako glosetan lehen, eta Lazarragaren eskuizkribuan gero eta are XX. mendearen hasieran hiltzear ziren hizkeretan (Azkuek bilduak). Hots, erdiaroan sortu bide ziren bai *zuek,* bai *guek.*

B) PLURALGILEAK

**Edun* aditzaren pluralgilea *-it-* da hizkera arkaiko guztietan: Zum 29, Sand 17 *ditugula*, Last 29, 34 Sand 9 *ditu*, Abend 8 *ditubala* 'dituela', Laz AL1142v *cituan*. Mendebaldean, *RS* (B), Errodrigo Zaratekoaren eresia (A), Lazarragaren eskuizkribua (A) eta Betolatzaren dotrina (A) ditugu salbuespen bakarrak *-z* pluralgilea duten **edun*-en adizkiak ere badituztelako. Halere, azpimarratu behar da lau testu hauetan aldaketa doi-doia hasia dela, agertzekotan, *-z* pluralgilea *-it-* pluralgilearekin batera agertzen baita (*dituz*), eta ez baita sistematikoa: *RS* 89 *dituz* vs 504 *ditu*, 204 *prestitu*; Zar 6 *dituz*; Laz A4:3 *çaitudaz* 'zaitut', A5:4, 12, 20, 28 *çaituez* vs A16:77, 85, A17:90 *çaitut*, *çaitue*; Bet 98 *badituz* baina 95 *cituala*. Bestalde, Lazarragaren eskuizkribuan **edun*ek NOR 2. pertsona pluraleko formak ere baditu pluralgilerik gabeak: AL1147r, A17:23, 92 *çaut* 'zaitut', 1152r *çabenorri* 'zaituenorri', *çabenaren* 'zaituenaren' eta A8:22 *çau* 'zaitu' (komunztadura-faltaz ik. § 3.4.5)

Garai honetan, *-z* pluralgilea **edin* laguntzailearen adizkietara ere hedatzen hasten da, *-te* pluralgile zaharraren ondotik kokatuz (*zaite* → *zaitez, daiten* → *daitezen*). B (ArrErr), A (Laz) eta GNren (Zalb) bana testutan bildu ditugu zabaltze horren lehen lekukotasunak: ArrErr 26 *gayteza[n]*, 33 *citeçan*, Laz AL1154r *ditecen*, 1144r, 1154r, A11:33 *citecen*, Laz AL1152r, A7:109, B9:5 *çatez*, Zalb 11 *alegra çaytes*.

C) *a* / *e* BOKAL TXANDAKETA

Mendebaldeko hizkera arkaikoetan (*RS,* Zum, Laz), egitura iragankorren argumentu kopurua aditz jokatuan islatua da, erro-aurreko bokalaren bidez, hain zuzen (Mitxelena 1954c). Bi pertsonako adizkiek, *a* dute, hiru pertsonakoek, berriz, *e* (*daroat* 'nik-hura' vs *deroat* 'hark-niri-hura'; *dagizu* 'zuk-hura' vs *degizu* 'hark-zuri-hura'). Konpara bitez (21-22), (23-24) eta (25-26). Gainerako euskalkietan delako bereizketa ez da lekukotzen, *egin* aditzarekin izan ezik, hirupertsonala delarik *degi-* oinarria duelako Oihenarten errefrauetan (27) zein Gko testu arkaiko (Bret) eta zahar batzuetan (Azpeitiko gutunak, Otxoa Arin) (28).

(21) Exilic **daroaez** maestruoc yrureun bana 'ixilik daramatzate maestruok hiru ehun bana' (Zum 30)
(22) Tacoc **deroat** dodana neure echerean cejara 'Takok (= beharrak, helburuak) eramaten dit daukadana etxetik merkatura' (*RS* 82)
(23) Berbaric asco erraz **dasaquet**, / çuc ala meresciduric 'Ziurrenik berba asko esan dezaket, / zuk hala merezirik' (Laz A27a:17)
(24) ezta munduan morroeric / norc **desaquedan** « nola ago ? » 'ezta munduan morroirik / nork esan diezadakeen «nola hago?»' (Laz A19:37)
(25) … çuc aguin **daguiçuna** eguiteco 'zuk agindu dezazuna egiteko' (Laz A17:116)

(26) erreguetan gagoçu esan **deiguçula** çure icena 'eskatzen dizugu esan diezaguzula zure izena' (Laz AL1147v)
(27) ezacussan beguic nigar **esteguic** 'ikusten ez hauen begiak ez dik negarrik eginen' (Oih *Prov* 153)
(28) **deguiola** eman Conde laztanari / vitoria andia (Bret 16)

D) *-te* / *-ke* ATZIZKI MODALAK

Euskara arkaikoan, *-te* eta *-ke* atzizki modalak banaketa osagarrian dira. Lehenbizikoa, *izan* eta **edin*-en adizkietan erabiltzen da argumentu bakarrekoak direnean: Etxp IV,9 *dirate* 'dirateke', Laz AL1143r *çatean* 'zatekeen', 1151v *liçateala* 'litzatekeela', *RS* 145 *ditean* 'daitekeen', Leiz Mat VIII,28 *zaiten* 'zitekeen'. Gainerako aditz guztiek —iragankorrak eta iragangaitzak, eta *izan* eta **edin*en adizki bipertsonalak— *-ke* daramate: Laz AL1153v *dacusqueçun*, A24:3 *ninduqueela*, Zar 7 *baleduque* 'baleuke', 21 *enoaque*, *Abend* 5-6 *enendorque* 'ez nentorke', *RS* 251 *sendaquique* 'senda hakike'.

Leizarraga eta Betolatzaren aldaeretan *-ke* atzizkia *-te*ren erabilera-eremuetara hedatzen hasia da; izan ere, *izan* eta **edin*en adizkietan *-te*ren ondotik agertzen da *-teke* bukaera pleonastikoa sortuz: Leiz Mat XXVI,9 *çatequeen,* Mat XI,21 *ciratequeen*, Bet 98 *leytequean*. Delako aldaketa euskalki gehiagotara zabalduko da ondoko mendean berean (ik. 6. kap., § 3.4.2).

E) **edun*-EN PARADIGMAK ETA HIRUPERTSONALAK

Lehenbiziko testuetatik, **edun*en adizkiak ugariak dira haren erroko bokalak bilakabide desberdinak nozitu baititu euskalki batetik bestera. Zehatzago, NOR 3. pertsonakoa duten adizkiek *dau-/do-* (mendebaldea), *de-* (G), *deu-* (A, G), *du* (L, BN) eta *dü-* (Z) hastapenak dituzte (*dot, det, deut, dut*).

Egitura hirupertsonaletan (ERG-DAT-ABS), *-i(n)-, *eradun* eta **edutsi* laguntzaileak lekukotzen dira hasieratik. Bakoitzaren banaketari dagokionez, **edutsi* mendebaldeko testuetan baizik ez da erabiltzen (Abend, Last, Frantz, *RS,* Zum, Bet, Laz), **eradun,* berriz, ekialdeko (Etxz, Etxp, Leiz, Oih, Beor, Olaz, Bak, Esp) eta erdialdekoetan (SalmMis). Azkenean, *-i(n)-* da euskalki guztietan lekukotu laguntzaile hirupertsonal bakarra. Halere, ez du leku bera euskalki guztien paradigma hirupertsonalean. Mendebaldeko euskara arkaikoan, **edutsi* ia sistematikoa da (Abend 7 *deustac* 'didak', Frantz *deusut* 'dizut', *RS* 519 *deuso* 'dio'), *-i(n)-* laguntzailearen bi adibide baizik ez baita lekukotzen (*RS* 25 *dic,* Last 11 *dio*). Halaber, BNz eta Zz, **eradun* laguntzaile nagusia da (Etxp V:1 *deraut* 'dit', Oih *Prov* 231 *drauku* 'digu'), eta *-i(n)-* bakarrik erabiltzen da NORI 3. pertsonakoa denean (Etxp XIV,4 *dio*; Oih *Prov* 563 *diotza* 'dizkio'). Alderantziz, Gz *-i(n)-* da nagusi

(Tol *diot, didan*), eta **eradun,* objektua pluralekoa izatekotan baliatzen da (SalmMis 23 *diraust* 'dizkit'). GNko testu arkaikoetan, aldiz, **eradun* eta *-i(n)-,* bata bestea bezain ohiko dira (Beor *derauçut*, Esp *drauçut* / Olaz *didate*, GurAit *diezcun, dizquigueney*); alabaina, ezin ditzakegu bakoitzaren erabilera-mugak eta eremuak zehaztu esku artean ditugun testu gehienen jatorri zehatza ez baitugu ezagutzen. Azkenik, Lazarragaren testuan, **edutsi* eta *-i(n)-* aldizkatzen dira, eta ez dirudi arau berezirik denik bakoitzaren erabileraren oinarrian: Laz A2:17 *deustaçu* / A3:24 *didaçu*; A17:42 *deusut* / A23:19 *diçut*, B14:33 *eustan* / A7:21 *cidan*. Gainera, hauekin batera, **edutsi*-ren kausatiboa dirudien **eradutsi* aditza ere biltzen da (B22:71 *deraustae* 'didate') (ik. Mounole 2015b).

#### f) Iraganeko menpeko perpausak

Euskara Arkaikoan, 3. pertsonako subjektu-adizkiek hipotetikozko morfologia dute iraganeko perpaus nagusi baten menpeko perpaus batean erabiltzean, direla denborazko, helburuzko, zein osagarri. Bestela erranik, iraganeko *z-* edo Ø- (mendebaldean) beharrean, *l-* aurrizkia daramate (*zetorren, etorren* → *letorren; zedin* → *ledin; zuen, eben* → *luen, leben*). Delako araua euskalki arkaiko guztietan lekukotzen da, bizkitartean, ez da sistematikoa, iraganeko eta hipotetikozko adizkiak maiz aldizkatzen baitira testuinguru horretan (34-36).

(29) Fray Vicentec esala, Fedea cina **liçala** (*Fray* 171)
(30) Egun baten, bada, bere bideti joeala, topadu çan arçai bigaz, ceñai Silviac itaundu eusten nora **lloacen** (Laz AL1147r)
(31) Iaunac Prophetáz erran ukan çuena **compli ledinçat** (Leiz Mat. I,22)
(32) Marteren mandataria […] sartu çan, utra aguiz **emuten leustela** bere ezpata çorroçagaz (Laz AL1154v)
(33) Emendatzenago cen Iaunean sinhesten çutenen compainiá, hambat guiçonez nola emaztez, Hambat non karriquetara ekarten baitzituztén eriac, eta ohetan eçarten eta lictereten, Pierris **ethor ledinean** haren itzala berere hetaric cembeiten gainetic iragan ledinçát (Leiz Act 5,15)
(34) aditzera emaiten çuela cer herioz hil behar **çuen** (Leiz Jn 12,33)
(35) aditzera emaiten çuela cer herioz hil behar **luen** (Leiz Jn 18,32)
(36) Berva oec esan da joan cidin Sirenaren aurrera, nun belaurico jarri çan, negarrez **egoala**, berva oec eguite **lebela** (Laz AL1152r)

### *3.4.3. Denbora, aspektua eta modua*

Euskara Arkaikoaren aditz-sistema ez da oso egonkorra denbora, aspektua eta moduaren adierazpideei dagokienez: anitz formak funtzio bat baino gehiago betetzen du, eta lehia

biziak dira formen artean. Hots, bidean da ondoko garaian burutuko den aldaketa ugari (ik. 6. kap § 3.4.3).

Garairik zaharrenetan, aditz trinko eta perifrastikoak banaketa osagarrian dira testuinguru gehienetan —zehatzago, orainean, iragan burutugabean eta aginteran—. Izan ere, oro har, jokabide trinkoa duten aditzek beren forma trinkoari eusten diote, eta perifrasiak konjugazio trinkorik ez dutenekin erabiltzen. Halere, gogoan izan behar da ordurako aditz askoren jokabide trinkoa defektiboa dela. Esaterako, *erakarri, itzuli, jarri, jo* aditzek aginteran baizik ez dituzte gordetzen beren forma sintetikoak (Laz A28:78 *zarriz* 'jarri zaitez', Oih *Prov* 251 *erakarrak*, IC *jac* 'jo ezak'). Gainera, testuinguru batzuetan —geroaldian eta iragan burutuan— forma trinko emankorreko aditzak ere perifrasien bidez jokatzen dira.

Azkenik, atal honetan zehar ikusiko dugun bezala, [aditzoina + **edin*] eta [aditzoina + **ezan*] perifrasiek pisuzko lekua dute Euskara Arkaikoaren aditz-sisteman. Batzuetan denbora-aspektu perifrasiak (iraganean), bestetan moduzkoak (agintera, baldintza, ahalera…), erabilera zabaleneko egiturak dira. Mendebaldean (A, B eta sartaldeko G), [aditzoina + **ezan*] iragankorraz gain, [partizipioa + *egin*] perifrasia ere erabiltzen da, hots, biak lehian dira. Halere, joera eta mailakatze desberdinak daude garaien arabera. Izan ere, xvi. mendea baino lehenagoko euskararen lekukotasun den *RS*en (cf. § 1), [aditzoina + **ezan*] egitura da nagusi iragan burutua eta agintera bezalako testuinguruetan (294 *erra cizan uria* 'erre zuen hiria', 194 *uler ezac lenago*); halaber, Arrasateko erreketaren kantuetan perifrasi hori baizik ez da. xvi. mende akabuko Lazarragaren testuan, berriz, [partizipioa + *egin*] egitura da arruntena (AL1142r *ençun eguien guztiai emun eioan tristeza andia* 'entzun zuten guztiei eman zien tristeza handia', 1152v *esan ce eguidaçu berva oriec* 'ez itzazu esan hitz horiek'). Hori hala izanagatik, xv eta xvi. mendeetako mendebaldeko testu guztietan, [partizipioa + *egin*] baizik ez daiteke erabil ahaleran eta geroaldian (*RS* 18 *ençun eztayçu guextoric* 'ez duzu entzungo gaiztakeriarik', Laz A21:31 *ecin sufridu neyquean* 'ezin sufridu nezakeen'), eta laguntzaile hirupertsonal gisa (esaterako, Lazarragak AL1151r *suplicaetan nachaçu deguioçula oy Silverori on derextala aguindu* dakar, eta nehola ere ez ***diezaiozula agindu*). Salbuespenak salbuespen, xviii. menderako, [aditzoina + **ezan*] perifrasia mendebaldeko hizkeretatik desagertuko da (xehetasun gehiagorako ik. Mounole 2007). Azkenik, ekialdean, lehen testuetatik, [aditzoina + **ezan*] perifrasiarekin batera, [aditzoina + **iro*] erabiltzen da ahaleran eta geroaldian (Etxp IV,35 *ordi diro persona* 'mozkortu dezake pertsona'; XIII,28 *verac diro mendeca* 'berak mendekatuko du'), eta GNk **erazan* —**ezan*-en kausatiboa— du hirupertsonal gisa: Irañ *Jaincoac parca derozola Migueli* 'Jainkoak barka diezaiola Migueli'.

### 3.4.3.1. Denbora eta aspektua

a) Oraina

Euskara Arkaikoan, trinkoak eta [*-t(z)en* + *izan* / **edun*] perifrasia dira oraineko bi forma nagusiak (37-38). Jokabide trinkoa duten aditzak trinkoki jokatu ohi dira, eta perifrasi bidez jokatzean beste balio aspektual bat hartzen, ohitura (39) edo maiztasunarena (40), hain zuzen.

(37) **Eztançuc** cembat gauça hire contra testificatzen duten ? (Leiz Mat XXVII,13)
(38) Oñ-escu çardenoc **apacen diot**, / ill[ustr]e abbadesa notadea (Laz B17:10)
(39) Farata asco calean / audiaca **ebilten dira** / ta oguiari leyoe jira (*RS* 48)
(40) ascotan **egote nax** berva baga (Laz A17:59)

b) Iragana

Euskara Arkaikoa beranduagoko euskaratik franko urruntzen da iraganaren adierazpideei dagokienez. Izan ere, garai honetan, iraganeko trinkoek balio burutua zein burutugabea har dezakete, eta iragan burutuak XVII. mendean berean desagertuko diren egiturak dakartza. Jarraian, iragan burutugabea eta iragan burutua aztertuko ditugu banan-banan.

Iragan burutugabean, trinkoak (41-42), eta [*-t(z)en* + *izan* / **edun*] perifrasia (43-44) erabiltzen dira banaketa osagarrian. Hortaz, oso arraroa da jokabide trinkoko aditzak perifrastikoki jokatzea.

(41) Oguenduru **çuyan** eta han galdu dic vicia (Etxp XIII,97)
(42) Egun batean nendorrela / bide estrecho batean, / escu batean necarrela / calçaidu usez errodela / çaldi on baten gañean, // **banecarren** escu bestean / listra onezco dardoa, / adarga on bat arzoean, / arnes fortiça gorpucean, / coraçaacaz cascoa (Laz B18:1-10)
(43) Eta gendetzeac **mehatchatzen cituen** hec ichil litecençát, baina hec oihu guehiago eguiten çutẽ, cioitela, Auc pietate guçaz Dauid-en seme Iauná (Leiz Mat XXI,31)
(44) Neuregaz neben libertadea / eroan cidan berequin; / ni aren minez **ilte ninçan** da / a beti aleguereric (Laz A14:25-8)

Pluskuanperfektua [partizipioa + *izan* / **edun*] perifrasiaren bidez adierazten da euskalki arkaiko guztietan (45-46). Leizarragaren testuan, perifrasi birkonposatua (47) eta [aditzoina + **edin, *ezan*] (48) perifrasiak ere han-hemenka agertzen dira balio horrekin.

(45) Hura traditzen çuenac, **eman cerauen** seignale, cioela, Nori-ere pot eguinen baitraucat, hura da (Leiz Mat. XXVI,48)
(46) Gaycez lagola **ençun nuyen** bana nic ez oguenic (Etxp XIII,8)

(47) Orduan compli cedin Iaunac Hieremias Prophetáz **erran ukan çuena** (Leiz Mat II,17)
(48) Eta guertha cedin egun batez hura iracasten ari cela, phariseuac eta Legueco doctorac baitzeuden iarriric, cein **ethor baitzitecen** Galileaco eta Iudeaco eta Ierusalemeco burgu gucietaric (Leiz Lc 5,17)

Euskara Arkaikoan, trinkoak (49-50), [aditzoina / partizipioa + **edin, *ezan, egin*] perifrasia (51-52), eta [partizipioa + *izan* / **edun*] perifrasia (53-54) erabiltzen dira iragan perfektiboa —gaztelaniaren *pretérito perfecto simple* delakoaren parekoa— adierazteko. Ondoko garaian, aipatu 2. perifrasia iragan burutua adierazteko modu bakarra bihurtuko da, [aditzoina / partizipioa + **edin, *ezan, egin*] perifrasia mendeko perpausetara bultzatuz eta iraganeko trinkoak burutugabera mugaturik (ik.. 6. kap., § 3.4.3.1). Azpimarratu behar da XVI. mendean aldaketa horiek jadanik bidean zirela. Izan ere, gehienetan, forma trinkoa duten aditzak perifrastikoki jokatzen dira iragan perfektiboa adierazteko (*nekarren > ekar nezan, ekarri nuen*), eta [aditzoina / partizipioa + **edin, *ezan, egin*] perifrasia gibelka ari da. Esate baterako, Betolatzak azken hau ez darabil behin ere eta Lazarragaren eskuizkribuan [partizipioa + *izan* / **edun*] perifrasia baino gutxiago agertzen da (iragan perfektiboaren agerraldi perifrastikoen % 23,7). Etxepareren liburuan, berriz, bi perifrasiek antzeko maiztasuna dute. Azkenean, Leizarraga salbuespen bakarra genuke, [aditzoina / partizipioa + **edin, *ezan* iraganean] perifrasia iragan perfektiboaren forma nagusia baita (agerraldi perifrastikoen % 98,2 Mateoren araberako ebanjelioan). Dena dela, tasa altu(egi) hau itzulpen-lanak eskatutako sistematizazio beharrari egotz dakioke (ik. gorago § 2.5.1.6-B atala).

(49) Jagui çan bere sillarean, / nic au esan da bertati; / artu ninduan escurean, / **baguioancen** arerean / floresta baten erditi (Laz B18:84)
(50) Ate bati **zegoen** eskalea, goseak **hil zezan** (Oih *Prov* 487)
(51) **Ioan nendin** enaguien oguen gabe ihesic (Etxp XIII,10)
(52) Oçac **yl eguia** mayaça ta ni **ase nenza** (*RS* 535)
(53) **Jayoçan** Maria B[r]igineaganik, **padecidueban** Poncio Pilatosen poderê azpiâ (Bet 93)
(54) Bi hautaric ceinec **eguin çuen** bere aitaren vorondatea? (Leiz Mat XXI,31)

Azkenik, Leizarragak perifrasi birkonposatua maiz darabil iragan perfektiboa adierazteko. Egitura horren adibide bat baizik ez dugu aurkitu Lazarragaren testuan.

(55) Eta iragan cenean berce aldera, Gergesenén regionera, aitzinera **ethorri içan çaizcan** bi demoniatu (Leiz Mat VIII,28)
(56) **Hunqui ukan çuten** guciac senda citecen (Leiz Mat XIII,36)

(57) Egun batean leucala / beste baçugaz cabildu, / aen artera **içan ninçan** / exil-exilic **coladu** (Laz B14:47)

c) Ohitura
Euskalki arkaiko guztiek partizipioaz eta *joan / eroan, eraman* laguntzaileez osaturiko perifrasia darabilte gertakari bat ohikoa dela –edo zela, iraganean– adierazteko. Ondoko mendeetan egitura hau Bz landako hizkeretarik desagertuko da (ik. 6. kap., § 3.4.3.1).

(58) Hao ysian **eztoa sartu** eullia, ta aldi guztietan ezta eder eguia (*RS* 123) 'Aho itxian ez ohi da sartu eulia, ta aldi guztietan ez da ederra egia'
(59) Mundu onec anhiz gende **enganatu darama** (Etxp II,74) 'Mundu honek jende ainitz engainatu ohi du'
(60) Tenpora baten **baneroean** / dama eder bat **servidu** (Laz B14:1-2) 'Garai batean dama eder bat zerbitzatu ohi nuen'

Honez gain, [*-t(z)en + jakin*] egitura biltzen da ohituraren balioarekin B arkaikoaren bi testutan, *RS*en eta Gar.en, hain zuzen. Erabilera hau oraino bizirik da B modernoaren hainbat aldaeratan, Lekeitioko euskaran, Elordieta, Elordieta & Hualdek erakutsi bezala (1994).

(61) Maemana **daki emaiten** (*RS* 307)
(62) Gonçalo Moro tati tati, Gaxtoa **gaxtigaetan daqui** (Gar B55) 'Gonçalo Moro tati tati, gaiztoa gaztigatu ohi du'

d) Geroaldia
Etorkizuneko gertakariei erreferentzia egiteko bideak nasaiak dira Euskara Arkaikoan. Zehatzago, hiru forma trinko eta lau perifrasi erabiltzen dira geroaldia adierazteko.

Lehenik, oraineko trinko batzuk —zehazkiago *etorri, edeki, *edun, -idi*— lekukotzen dira han-hemenka geroaldiaren balioarekin. Hauez gain, mendebaldeko hizkeretan *egin* aditzak sistematikoki hartzen du delako balioa perpaus nagusian erabilia delarik; mendeko perpausetan, berriz, orainaren balioari atxikitzen dio (67) adibidean ikusi bezala.

(63) Lan-ihesi Castrora, han ere jakia bera **eztator** ahora (Oih *Prov* 295) 'Lan ihesi Castrora, han ere jakia ez da bakarrik etorriko ahora'
(64) Erroia haz ezak, begiak **dedetzak** (Oih *Prov* 152) 'Belea haz ezak, begiak lehertuko dizkik'
(65) Oranocoac ygorritu oro buluzcorriric / eta **eztute** guerocoec hantic escapaceric (Etxp I:90-1) 'Orain arteko guztiak igorri ditu biluzirik / eta gerokoek ez dute izango handik eskapatzerik'

(66) Mendi altuan erura **daydi** (Laz B35:1) 'Mendi altuan elurra egingo du'
(67) Zaran bat daguianac bi **day** (*RS* 34) 'Zare bat egiten duenak bi egingo ditu'

Gero, *RS,*[137] Garibai eta Lazarragaren testuetan, *-(a)n* atzizkiaz jantziriko oraineko trinkoak biltzen dira geroaldi balioarekin. Gainera, Lazarragaren eskuizkribuan, [partizipioa + *egin*] perifrasiko laguntzailea ere *-(a)n* atzizkia gehiturik ager dakiguke etorkizuna adierazteko. Kasu guztietan, aditz horiek aginterazko forma baten ondotik heldu dira, gehienetan hari koordinaturik. Mitxelenak (1954e), *RS*en agertzen diren adizki berezi horiek aztertu ondoan proposatu bezala, baliteke geroaldi gisa berranalizaturiko subjuntibozko formak izatea —subjuntiboari buruz, ik. § 3.4.3.2—. Delako aldaketa (subjuntibo → geroaldi) hizkuntza askotan gertatu da, esaterako grekera eta irlandes zaharrean, latinez eta gotikoz.

(68) Ax adinhon ta **axa** hon 'Izan hadi aberatsa eta izango haiz ona' (*RS* 31)
(69) Yquedac ta **diqueada** 'Emaidak eta emango diat' (*RS* 233)
(70) Ausho Perucho urdeorri, eta neuc ies **daguidan** (Gar 26) 'Eutsok Perutxo urde horri, eta neuk ihes egingo dut'
(71) Ençuçu eta **diracasudan** / ezconduaren dotea (Laz A24:47) 'Entzun ezazu eta irakatsiko dizut / ezkonduaren dotea'
(72) Belarrioc irecaçu eta **dançuçun** (Laz A17:8) 'Belarriok ireki itzazu eta entzungo duzu'
(73) Ençuçu ta **jaquin daguiçun** (Laz A14:43) 'Entzun ezazu eta jakingo duzu'

Azkenik, euskalki arkaiko guztiek *-te/-ke* atzizkiaz lagundu oraineko trinkoak darabiltzate etorkizuneko gertakari bati erreferentzia egiteko. *RS*en, jokabide trinkoa duten aditzek *-te/-ke* atzizkidun formari tinko atxikiaz; xvi. mendeko testuetan (Etxp, Leiz, Laz), gehienetan, [*-tuko* + *izan* / **edun*] perifrasira jotzen dute geroaldian. Bestela erranik, forma perifrastikoaren hedatzea trinko horren kaltetan xv-xvi. mendeen artean gertatu dateke.

(74) Hogei urtetan eztena, hogei eta hamarretan eztakiena, eta berrogeietan eztuena, da jagoiti **eztatena**, **eztakikena** eta **eztukeena** (Oih *Prov* 524) 'Hogei urtetan ez dena, hogei eta hamarretan ez dakiena, eta berrogeietan ez duena, ez da izango, ez du jakingo, eta ez du edukiko inoiz.'
(75) Beste bategaz ezcondu arren, / uste badoçu oba dala, / errazoaz **desaqueçue**: / la bella mal maridada (Laz A8:15) 'Beste batekin ezkondu arren, / uste baduzu hobe dela, / arrazoiarekin esango dizute: / la bella mal mariada'

137. Horretan, bukaerako *-n* eroria da adizkiotan.

(76) Norc-ere hilen baitu, hura iudicioz punitu içateco digne **date** (Leiz Mat V,21) 'Hilko duena judizioz gaztigatua izateko digne izango da'

(77) Nic diosçut **cyratela** Iaun gucien Iauna (Henr 6) 'nik esaten dizut izanen zarela Jaun guztien Jauna'

Goraxeago aitzinatu bezala, hainbat perifrasi erabiltzen da etorkizuna adierazteko. Lehenik, gutxitan bada ere, [aditzoina + **edin*$_{+\ -te\ /\ -ke}$] perifrasia, eta [aditzoina + **ezan*$_{+\ -te\ /\ -ke}$] —ekialdean—, eta [partizipioa + *egin*] —mendebaldean— haren ordain iragankorrak biltzen dira geroaldiaren balioarekin. Perifrasi hauen aditz-laguntzaileak orainekoak dira, eta **edin* eta **ezan*i *-te*/*-ke* atzizkiak eransten zaizkie. Geroago (§ 3.4.3.2) ikusiko dugun legez, hiru egitura horiek ahalera adierazteko modu arruntak dira Euskara Arkaikoan; ondorioz, batzuetan zail dateke erabakitzea forma batek etorkizunaren ala ahaleraren balioa duen.

(78) Eguin ta aguindu ta ez **ayte galdu** (*RS* 462) 'Egin eta agindu, eta ez haiz galduko'

(79) Ardi bilha adi, nahiz bake, otsoak **jan ezake** (Oih *Prov* 545) 'Ardi bilaka hadi bake-nahian, otsoak jango hau'

(80) Nic prometietan deusut ece laster **osatu çatezqueala** daucaçun gaxaesun orretaric (Laz AL1151r) 'Nik hitz ematen dizut laster osatuko zarela daukazun eritasun horretatik'

(81) Zarrari ajea eguioc aldatu, ta **dayc galdu** (*RS* 178) 'Zaharrari haizea alda iezaiozu, eta galduko duk'

(82) Alfer **ifini naiçu** purgaetan / ozpin-baracacetan seculaco: / ez deraustae besteric ateraco, / salvo bay çaitudala amaetan (Laz B22:69) 'Alferrik ipiniko nauzu purgatzen / ozpin-barakatzetan sekulako: / ez didazu besterik aterako, / salbu bai zaitudala maite'

Bestalde, [aditzoina + **iro*] ekialdeko perifrasia, han-hemenka erabiltzen da geroaldia adierazteko (Zalg, Oih, Etxp, Leiz). Gisa berean, [partizipioa + *-idi-*] perifrasia behin bildu dugu geroaldi balioarekin, Lazarragaren testuan (85). Bi perifrasi hauek ere gehiagotan biltzen dira ahaleraren balioarekin (ik. § 3.4.3.2).

(83) Domingo eguic emazte, atzi lo, berac **iratzar hiro** (Zalg 158) 'Domingo har ezak emazte bat, lo egik, berak iratzarriko hau'

(84) Paciença dugun eta ieyncoac guizan ayuta / malician dabilena verac **diro mendeca** (Etxp XIII,28) 'Pazientzia izan dezagun eta jainkoak lagundu gaitzala / malizian dabilena berak mendekatuko du'

(85) çuc ecer gura badoçu erri aetaruç, esan eguidaçu, cegati utra borondate oneç **eguin daidit** (Laz AL1151v) 'zuk ezer nahi baduzu herri haietarantz, esan egidazu, zeren eta oso borondate onez egingo dut'

Azkenik, lehen testuetatik [*-tuko* + *izan* / **edun*] perifrasia lekukotzen da, eta hura da geroaldia adierazteko modu nagusia XVI. mendeko euskalki guztietan. Gorago aipatu forma trinko eta perifrastikoek ez bezala, perifrasiak erabilera bakarra du, eta horrek eragin duke haren hedatzea eta beste formak —batzuetan nahasgarriak— baztertzea. Azkenik, ekialdeko hizkeretan, perifrasi horretako laguntzaileari *-te/-ke* atzizkia gehitzen zaio noiztenka, seguruena *-te* / *-ke* atzizkidun oraineko trinkoekiko analogiaz (90-91).

(86) Mundu oro **iarriren da** suyac arrasaturic (Etxp I,316)
(87) Hi handi, ni handi, nork **erranen du**, gure astoari harri? (Zalg 147)
(88) çuri naçanean munduan erruric / **estet ez yçango** neure pareric (*SalmMis* 25)
(89) Andra guztioc erçeti **erabilico aude** veti (*RS* 316)
(90) emazteac cerengatic gaiz **erranen dirate**? / Handi eta chipi oro hayetaric guirade (Etxp III,9)
(91) Orduan haren etchea **pillaturen duque** (Leiz Mat. XII,29)

3.4.3.2. MODUA

a) Subjuntiboa

Euskara Arkaikoak ez du subjuntiborik. Mendeko perpaus osagarri eta finaletan, hots, inguruko erromantzeek subjuntiboa erabiliko luketen testuinguruetan, trinkoak eta [aditzoina + **edin, *ezan*] eta —mendebaldean— [partizipioa + *egin*] perifrasiak erabiltzen ditu. Alabaina, trinkoak eta perifrasi horiek perpaus nagusietan ere erabiltzen dira garai osoan —trinkoak orainean zein iraganean, perifrasiak soilik iraganean (ik. § 3.4.3.1.b)—. Hori hala izanik, eta subjuntiboaren izaera[138] gogoan harturik, Euskara Arkaikoan indikatibo eta subjuntiboaren arteko bereizketarik ez dela ondorioztatzen dugu. XVII. mendetik goiti, denbora-aspektu perifrasi berriak hedatzearekin, trinkoak desagertu, eta [aditzoina + **edin, *ezan*] eta [partizipioa + *egin*] perifrasiak mendeko perpaus final eta osagarrietara mugatuko dira. Orduan sortuko da euskararen subjuntiboa, orduan bihurtuko dira perifrasi horiek euskararen subjuntibozko formak (ik. 6. kap., § 3.4.3.2).

Erran dugu testu arkaikoenetan trinkoak eta [aditzoina + **edin, *ezan*] eta [partizipioa + *egin*] perifrasiak perpaus osagarri eta helburuzkoetan erabiltzen direla. Oro har, perpaus osagarrietan, forma jokatuari —trinkoa edo perifrasiko laguntzailea— *-(e)n* atzizkia gehitzen zaio ekialdeko hizkeretan, *-(e)la* mendebaldekoetan. Helburuzko perpausei dagokienez, euskalki guztiak bat datoz aditz jokatugabeari *-(e)n* gehitzean. Gainera,

138. «Subjuntiboa» izendapen morfologikoa da, mendeko perpaus jakin batzuetara mugatu adizkiei eman ohi zaiena.

askotan, helburuzko balioa indartzeko, *zeren* (Etxp, Laz) (96-97), eta *zergatik* (Laz) (98) partikulak erabiltzen dira aditzaren aurretik, edo *-(e)n* menderagailuari *-tzat* postposizioa eransten (Leiz, Laz) (99-100). Azkenik, mendebaldeko testuetan, helburuzko perpausak ezezkakoan direnean, *ez* partikularen ordez, *ze* erabiltzen da (101).

(92) Hihaurk lan egin-ahala, berzek **degiten** eztutzala (Oih *Prov* 234)
(93) Zin egiten dicit presenteco huneçaz, Yeinquari otoy eguiten daracodala **çaducen** osoric eta alegeraric (Etxz 17-9)
(94) Iaun erreguec mezu nenzan **joan nenguion** bertaric (Etxp XIII,7)
(95) Garcilaso traidoreac aguindu eben undaetan; / az chiquirra vioçagaz **lecarroela** señaletan, / **gumutatu ez lequion** bere ayta escaetan. (Laz A25:35-7)
(96) **Ceren** unsa **orhit citen** niçaz ama eztia / gogo honez errandut çuri aue maria (Etxp I,447)
(97) Aren aldean jasarri ninçan / **cerren ez lidin uçatu** (Laz B14:50)
(98) oyta irago ce bequiqueo / bisitaçaca asteric / **cegaiti artu ez daiquean** / oy beste serbidoreric (Laz A14:99)
(99) inorc **eçautu ez leguiançat**, quendu eben bere jaztecoac eta artu eben arçai baten jaztecoac (LazAL 1147v)
(100) Eramanen çarete […] hec eta Gentilée testimoniage hau **dutençat** (Leiz Mat X,18)
(101) Eshseco mirabeari echi, **çe daquia** andra andi (*RS* 525)

b) Agintera

Euskara Arkaikoan, trinkoak eta [aditzoina + **edin, *ezan*] eta [partizipioa + *egin*] perifrasiak —azken hau mendebaldean— aginterazko forma nagusiak dira. Zehazkiago, banaketa osagarrian daude zeren eta, oro har, aginteran jokabide trinkoa duten aditzek forma trinkoari atxikitzen baitiote (102-105). Halere, xvi. menderako, aditz batzuek beren aginterazko forma trinkoa galdua dute (**edun* Etxp, Amdx vs *RS,* Oih, Leiz, Laz gordetzen dutenak; *izan* Leiz vs *RS* gordetzen duena), eta horren ordez, *-(e)n* atzizkidun forma trinkoa erabiltzen da (ik. 106 vs 107; 108 vs 109; 110 vs 111).

(102) **Arreit** niri (Leiz Mat XIX,21)
(103) Garagar[r]ylean nesquea **ezarc** alborean (*RS* 313)
(104) Ene bioça / **erdira çatez** dolorez (Laz B29:6)
(105) **Aparta eçaçu** ceure vistatic (*SalmMis* 32)
(106) Regla eçac egun oroz onsa heure etchia / eure gauça gucietan emac diligencia / eta eure trabayluya **duyan** penitencia / Iangoycua lauda eçac ororen buryan (Etxp I:207)
(107) Sentona, agorrilan bidez bahoa, **uk** eureki ekitakoa (Oih *Prov* 669)

(108) Ene arima **duçuen** gomendatu (Amdx 12)
(109) **Beguirauçue** menosprecia ezteçaçuen chipi hautaric bat (Leiz Mat XVIII,10)
(110) **Aicén** han nic darraqueadano (Leiz Mat II,13)
(111) **Ax** adinhon eta axa hon (*RS* 31)

Gero, egungo euskaran, jasailea lehen pertsonakoa duten iragankorrak perifrastikoki jokatzen dira (*ekar nezazu*). Halere, ez dirudi murrizketa hori betidanikoa denik adibide trinko bana aurkitu baitugu Arrasateko erreketan (112) eta Oihenarten poesietan (113), eta Lazarragaren testuan erabilera trinkoa sistematikoa baita kasu hauetan ere (114-116).

(112) [An]dra urena Butroecoa **nançuçu** (Butr A:6)
(113) Bana galde nauzun horrez ukenduru **negizu** (Oih *Poes* XXIV,5)
(114) Gora eçaçu ceure beguioc, / badoçu sentimenduric: / Amorea nayz eta **nacusu**, / baldin badoçu beguiric (Laz B23:47)
(115) Orain, edola bere, **çe nafinçu** [berba baga] (Laz A17:60)
(116) Mundu guztia isasoagaz / **nançuçu,** çaoz gueldiric (Laz A10:4)

Debeku baten adierazteko, ekialde eta erdialdeko testuek (Etxp, Leiz, Oih, Bela, GurAit, *SalmMis*) *-(e)la* adizkidun oraineko formak darabiltzate (Leiz *errozue* vs *ezterrozuela*, *begira ezazue* vs *eztezazuela dei*). Mendebaldean, berriz, aginterazko adizkiei eusten zaie, eta ezezkako partikula aldatzen, *ez* beharrean, *ze* erabiliaz (117-118); Mitxelenak (*FHV*) **eze* berreraikitzen du aitzineuskararako. Azkenik, mendebaldeko testu arkaikoek geroaldiko aginteraren lehen lekukotasunak dakartzate: *-ke* atzizkidun formak dira, agindua solasaldiaren ondotik betetzeko dela adierazten dutenak (119-122). Ondoko mendeetan erabilera horren aztarnak erdialde eta ekialdeko testuetan ere bilduko dira (ik. 6. kap., § 3.4.3.2)

(117) **Ezca çe aquio** daucanari ta vay onderextanari (*RS* 257)
(118) **Esan ce eguidaçu** berva oriec (Laz AL1152v)
(119) Çe **eyquec** maurtuti hoeaneâ, eder eztanic calean (*RS* 36)
(120) Jentil onbrea, ona **çatozque** / gura banoçu gozadu (Laz B14:11)
(121) **Echun ayte** afalzaga ta **jagui aite** zorbaga (*RS* 394)
(122) **Sinis eçaqueçu** ene eguia (Laz B11:13)

d) Preskriptiboa

Azkenik, Leizarraga, Etxepare eta Oihenartek badituzte Lafonek *preskriptibo* gisa izendatu adizkiak. Formaz, hipotetikozko trinko eta perifrastikoak ([aditzoina + **edin, *ezan*]) dira, *albait-* aurrizkidunak. Haien balioari dagokionez, agindu bat adierazten dute (xehetasun gehiagorako ik. Mounole 2011a).

(123) Iudean diratenéc **ihes albeileguite** mendietarát (Leiz Mat XXIV,16)
(124) Otsoa lagun duanean, **albaihu** hora saihetsean (Oih *Prov* 384)
(125) Eliçara içanian so eguic batayarrira / pensa eçac han duyala recebitu fedia / Ieyncoaren gracia eta saluaçeco vidia / hari **eguin albaiteça** lehen eçagucia (Etxp I: 36)

e) Optatiboa

Nahikari baten adierazteko, hipotetikozko adizki trinko eta perifrastikoak ([aditzoina + **edin, *ezan*]) darabiltzate Euskara Arkaikoko autoreek. Aditz jokatuak *ai-* (Leiz, Gar), *ba-* (Etxp, Laz, Lcc) edo *alba-* (Etxp) aurrizki modala darama euskalkien arabera:

(126) **Ailitez** trenca çuec trublatzen çaituztenac (Leiz Galat 5,12)
(127) Eder **valiz**, on ez **eiliz** (GA A56)
(128) Oraciotan beti nago: / osoac ayta **jan balegui!** (Laz A19:40)
(129) Oxala = **Validi** (Lcc 299v)
(130) **Albanerra** eguya nyc dut pena handia (Etxp IX:47)

f) Ahalera

Euskara Arkaikoan, trinkoak eta [aditzoina + **edin, *ezan*] eta [partizipioa + *egin*] perifrasiak dira ahalerazko forma nagusiak. Aditz jokatua orainekoa duten formek oraineko (131-132) edo geroaldiko ahaleraren balioa har dezakete (133). Iragana eta hipotetikoko paradigmakoek, berriz, iraganeko (134) eta hipotetikozko ahalera (135-136) adierazten dute, hurrenez hurren. Paradigma batekoak ala bestekoak izan, trinkoek eta **edin* eta **ezan* laguntzaileek *-te* / *-ke* atzizkiak derrigorrezkoak dituzte perpaus nagusian (131-136).

(131) Nehorc bi nabussi **ecin cerbitza ditzaque** (Leiz Mat VI,24)
(132) Ezta munduan morroeric / norc **desaquedan** «nola ago?» (Laz A19:38)
(133) Gelosiac **eztiçaquet** nic gayz **erran** seculan (Etxp IV:29)
(134) Berce gendec usteçuten / **ecin scribaçayteyen** (Etxp XIV:8-9)
(135) Lapico eçin dana estalgui **liçate,** çe edoceynec dauco vere lecua vete (*RS* 69)
(136) Secula barriz **ecin neynde** / çure aurrean **aguirtu** (Laz B14:35)

Forma hauez gain, ekialdeko autoreek (Etxp, Leiz, Oih) [aditzoina + **iro*] (137-138) eta mendebaldekoek (Laz) [partizipioa + *-idi-*] (139) perifrasiak dituzte, oraineko, geroaldiko, iraganeko eta hipotetikozko ahalera adierazteko.

(137) Ehonere gayzic ezta çuc **qhen eztiroçunic** (Etxp II:124)
(138) Berceac emparatu ditu, bere buruä **ecin empara diro** (Leiz Mat XXVII,42)
(139) Neure buruau **erraz daidit** / nic dichosaçat **edugui** (Laz A7:23)

Ondoko mendeetan, oraina eta iraganeko ahalerak guztiz berrantolatuko dira: trinkoak desagertuz joango dira eta, aipaturiko perifrasien ordez, [partizipioa + *izan* / **edun*] eta [*-ten* + *izan* / **edun*] egiturak erabiliko mendebaldean eta ekialdean, hurrenez hurren (ik. 6. kap., § 3.4.3.2). Gainera, [*-tuko* + *izan* / **edun*] perifrasia geroaldiko ahaleraren berezko forma bihurtzen da. Halere, Lazarraga, Leizarraga eta Oihenart lekuko, XVI. mendean hiru perifrasi hauek jadanik sortuak ziren (140-143).

(140) Jauregik, berak **ardiesten ezin duena** du gutiesten (Oih *Prov* 263)
(141) Beti beguira nago çuregana / **Ezin açartu nax** ezer esaten (Laz A17:74)
(142) ilabetean **ecin oy neben** / secula barriz **topadu** (Laz B14:43-4)
(143) Eta horrá, mutu içanen aiz eta **ecin minçaturen aiz,** gauça hauc eguin ditecen egunerano (Leiz Lc I,20)

g) Baldintza

Euskara Arkaikoaren baldintzaren adierazpideak franko desberdinak dira egungo euskararekin konparaturik. Lehenik, baldintza errealean, oraineko gertakari burutugabe bat protasian aipatzeko trinkoak eta [aditzoina + **edin, *ezan*] eta [partizipioa + *egin*] perifrasiak hobesten dituzte XVIko autoreek (144-145). Hortaz, ondoko mendeetan alde bat orokortuko den [*-ten* + *izan* / **edun*] perifrasia doi-doi hedatzen hasia da (146). Baldintzaren ondorioa etorkizunean kokatzekotan, [*-tuko* + *izan* / **edun*] perifrasia da ohikoena (144, 146) apodosian, nahiz *-te/-ke* atzizkidun oraineko trinkoak ere biltzen diren (145).

(144) **Baldin** çuey on daritzueney on **badarizteçue**, cer sari **ukanen duçue**? (Leiz Mat V,46)
(145) **Hil badadi,** hura nola nor **doaque** gaynera (Etxp III:25)
(146) Argaloc ydeco **eyten badira** aec yndarsuen **yçango dira** (*RS* 403)

Baldintza irreal edo hipotetikoa balizko gertakariez ari da; hortaz, adizkiak —trinkoa edo perifrasiko laguntzailea— hipotetikozko morfologia du. Delako baldintza irrealak burutu / burutugabe oposaketa du bere baitan; ondoko lerroetan bakoitzaren formak aipatuko ditugu. Euskalki Arkaikoek —egun bezala— [partizipioa + *izan* / **edun*] erabiltzen dute baldintza irreal burutuaren protasian (147-148). Honez gain, Leizarraga perifrasi birkonposatuaz baliatzen da (149).

(147) Valinetan **ioan ezpaninz** oguenduru ninçaten (Etxp XIII:11)
(148) Gueixeago esango neben, / **eugui baneu** astiric (Laz A10:60)
(149) Ecen baldin Tyren eta Sidonen **eguin içan balirade** çuec baithan eguin içan diraden verthuteac […] aspaldi […] **emendatu ciratequeen** (Leiz Mat XI,21)

Baldintza irreal burutugabeari dagokionez, trinkoak eta [aditzoina + **edin* / **ezan*] eta [partizipioa + *egin*] perifrasiak dira protasiko forma arruntenak (150-152). Halere, ondoko mendeetan hedatuko diren [*-ten* + *izan* / **edun*] eta [*-tuko* + *izan* / **edun*] perifrasiak jadanik agertzen dira testuinguru horretan (153-154). Apodosian, *-te* / *-ke* atzizkidun trinkoak, [aditzoina + **edin* / **ezan* + *-te* / *-ke*], [partizipioa + *egin* / *-idi-*] —mendebaldean— eta [aditzoina + **iro*] —ekialdean— perifrasiak dira lekukotu bakarrak. Bestela erranik, Euskara Zaharretik aurrera nagusituz doakeen [*-tuko* + *izan* / **edun* + *-te* / *-ke*] perifrasia ez da biltzen (ik. 6. kap., § 3.4.3.2).

(150) Astean beyn **baleçarçue** aus oça ta brasea, / agaz **osatu lequidiçu** / mataduraco frezea (Laz AL1159v)
(151) Adisquide bar[r]iagayti zar[r]a **ucatu balidi**, edo len edo guero calta **artu leydi** (*RS* 510)
(152) Oi aldioneri **albanegui empara**, barriz **enendorque** Aramaico contrara (Abend 5)
(153) Penac oro hon **lirate** çu **bacina orhicen** (Etxp VI:14)
(154) Beccatu honetan **hilen baguina** / damnatu **luqueçu** ene arima (Etxp X:19-20)

### *3.4.4. Aditzen erregimena*

Euskara Arkaikoak egungo euskarak baino iragangaitz gehiago du. Lehenik, bada aditz andana bat ABS-DAT erregimena duena «igorlea» absolutiboan eta «destinatzailea» datiboan izanik, esate baterako *behatu, beldur izan, burrustu, atxiki, eutsi, itsasi, jarin, jarraiki, jarrugi, lagundu, ohartu, oratu, oroitu, otoiztu, segitu, suplikatu, urratu*. Ondoko mendeetan, haietarik gehienen argumentu egitura guztiz aldatuko da (ik. 6. kap., § 3.4.4).

(155) Gure echian **ohart vadaquizquigu /** bioc iagoyticoz galdu guituçu (Etxp X:37)
(156) Gendetze handi **iarreiqui cequión** (Leiz Mat XX,29)
(157) Ceruetaco Erregueari / oy dira encomendadu / suplicaetan liçatela / nay **lequiela lagundu** (Laz AL1154r)
(158) **Ausho** Perucho Urdeorri, eta neuc iesdaguidan (Gar A26)

Gero, bi absolutibo dituzten aditz bipertsonalak eta hirupertsonalak biltzen dira, *bilatu* (Laz), *erran* (Laz, Maiora 2011), *eskatu* (Laz, Leiz, *RS*, Gar), hain zuzen.

(159) Eta, ala, egun baten, bere ugaçabari licencia **escatu jacan** bere errira joateco (Laz AL1146r) ‘eta, hala, egun batez, bere ugazabari baimena eskatu zion (lit. zitzaion) bere herrira joateko’
(160) arren eguia bat **çarrezt**: / on dereiztaçun ala ez (Laz A4:1) ‘arren, egia bat erran iezadazu (lit. zakizkit): / maite nauzun ala ez’

(161) **çareço** Martini viar arrasean datorrela (1579, Maiora 2011) 'erran iezaiozu (lit. zakizkio) Martini bihar arratsean etor dadila'
(162) Beste amore **bilatuco nax** (Laz A4:11) 'Beste maitale bat bilatuko dut'

### *3.4.5. Komunztadura arazoak*

Bährrek (1925: 98-9), eta haren ondotik Azkuek (1932-5: §775) erakutsi zuten «Gko Bren» (Oñati, Arrasate, Bergara, Antzuola), eta hegoaldeko Gren (Legazpi, Zegama, Segura, Gabiria, Mutiloa, Ormaiztegi, Idiazabal) aldaera batzuetan egitura iragankorretako objektu pluralekiko komunztadura ez zela aditzean islatzen. Euskara Arkaikoan, komunztadura falta hau Arabako euskararen lekukotasunetan aurkitzen dugu, Lazarragaren eskuizkribuan eta Landucciren hiztegian,[139] hain zuzen (163-165) —ez da horren adibiderik Betolatzaren dotrinan—. Lazarragaren testuan, salbuespenak daude **edun* aditzarekin, noizean behin plural komunztadura baitu (166-167).

(163) Velarri andiac **daucana** (Lcc 299)
(164) Pelicanoac amorioz / **umeac daguianean**, / bere odolaz mantenicen **dau** / guztiac aci artean (A16:89-92)
(165) Silveroc eta Doridoc leengo bervaoc **ençun eguien** orduan (AL1153v)
(166) Bada bere […] salvaje biac **arrebatadu cituen** Sirena ta Silvia (AL1153r)
(167) Onerean irugarren egunean **ateraco ditu** buruac edetera, çuec **socorridu ez badaguiçu** (AL1153v)

Azkenik, BN (Etxp, Etxz) eta Zko (Zalg, Oih) testu arkaikoek egitura ditransitiboetako datibozko argumentuarekiko komunztadura falta erakusten dute askotan. Delako gertakaria XVII. mendeko GNren testuetan ere lekukotzen da (Beriain, Elizalde eta Ros erronkariarraren gutunak), horrek erakusten baitu garai batean ekialde zabaleko ezaugarria izan dela.

(168) Sainduier ere **egin ezak** heure ezagutzia (Etxp I:53)
(169) Arrazoin da mundu orok **dagien** zuri ohore (Etxp II:109)
(170) Ene escusac, othoy, aytari eta **amari ygor yçaçu**, ahalic eta hobequiena (Etxz 26-27)
(171) Ogen **egiten du onei**, barkatzen **duenak** gaxtoei (Oih Prov 654)
(172) Nabusitarik gertatzen da zerbitzari, bere sekretua **agertzen duena** motilari (Oih Prov 321)
(173) Hi handi, ni handi, / Nork **erranen du**, gure astoari harri? (Zalg 147)
(174) Hobe liçate venturaz indarrari, sustantiuoac **inhardets deçan** berceari (Zalg 1)
(175) Gure erriari **leytu dut** çure carta (Ros 10-1r:14)

139. XVIII. mendean, Sabandoko Gamizengan aurkitzen da, orobat.

### 3.5. Sintaxia

Atal honetan, Euskara Arkaikoaren sintaxiaren berezitasun zenbait izanen dugu aipagai, hitz-ordena (§ 3.5.1), genitibozko objektuak (§ 3.5.2), Linschmann-Aresti legea (§ 3.5.3), koordinazio zaharra (§ 3.5.4) eta *-ra izan* gisako lokuzioak (§ 3.5.5).

#### *3.5.1. Hitz-ordena*

Euskara Arkaikoak hitz-ordena bereziak dakartza sintagma- eta perpaus-mailan. Hemen, izenlagunak, eta erlatibozko perpausak aipatuko ditugu. Ondotik, *ez* partikularen kokapen aldakorraz arituko gara.

Euskalki guztietan oso ohiko da izenlaguna genitiboan doana, osatzen duen izenaren ondotik agertzea. Horrelakoetan, izena —edo sintagma-burua— mugagabean da eta genitibozko sintagmak darama hondarkia.

(176) Ama **bereac** 'bere amak' (ArrErr 42)
(177) Oracione **igandeco** 'igandeko orazione' (Etxp I,57)
(178) Ene andra Milia **Lasturco** 'ene Lasturko andra Milia' (Last 13)
(179) Jaun Peru **Abendañococ** 'Abendañoko Peru jaunac' (Abend 2)
(180) erri **negarrezco** onetan 'negarrezko herri honetan' (Bet 94)
(181) andra abogada **gueurea** 'geure andra abogada' (Bet 94)
(182) ez, Jauna, apartadu bioz **enetic** 'ez, Jauna, apartadu ene bihotzetik' (SalmMis 44)

Gisa berean, gerta liteke erlatibozko perpausa osatzen duen izenaren ondotik agertzea. Kasu horretan ere, hondarkia menderagailuari eransten zaio, eta izena —edo perpaus-burua— mugagabean da.

(183) Zeren ikustera ilki izan zarete desertura? **kanabera** haizeaz **erabilten den baten**? 'haizeaz erabiltzen den kanabera baten' (Leiz Luk VII,24)
(184) **Gor** nequez **minço cen bat** 'nekez mintzo zen gor bat' (Leiz Mark VII,32)
(185) Eta haren **adisquide** oray Bordelen **denac** 'eta orain Bordelen den haren adiskideak' (Etxp XV:15)
(186) vortuetan edo verçe **lecu** vear / **denean** (Ros 10.1r:11)

Halere, gogoan izan behar da bi ordena horiek ez direla sistematikoak, eta gehienetan genitibozko sintagma zein perpaus erlatiboa izenaren aurrean kokatzen direla.

Testu zaharrenetan oso ohiko da ezezkako partikula (*ez* edo *ze*) perifrasietako aditz nagusia eta laguntzailearen artean kokatzea. Zalantzarik gabe, horrek perifrasien gramatikalizazio-maila apalaren alde egiten du.

(187) esquer hon bat vqhen **ez**tut çuyeganic vician (Etxp I:342)

(188) echi **ez** eyguçu (Bet 93)
(189) niorc ere isanen **es**tu (Amdx 11)
(190) galdu **çe** eguic (RS 336)
(191) ydoro **ez** eban (RS 343)
(192) acordaduco secula **ez** jat (Laz A24:13)
(193) Edirayten **ez**tau inorc munduan / çu laco donzella bat ain lindaric (Laz A17:49)

### *3.5.2. Objektua genitiboan*

Euskara Arkaikoan, aditz-izena perpaus jokatugabe bateko burua denean, haren osagarria genitiboan markatzen da. Bestela erranik, aditz-izena buru duten perpaus jokatugabeek izen-sintagmen antzeko izaera dute: aditz-izenak bere izen tasunei eusten die, eta osagarria, edozein izenlagunen gisan, genitiboan markatzen. Euskara modernoan, arau hori ekialdeko hizkeretan baizik ez da gordetzen.

(194) Bergararroc asi dira / trajioe **baten** asmaçean (ArrErr 23)
(195) Mundu gucia huna vetor, aur noble onengana, / oin **escuen** apazcera, Iaun andiari beçala (Henr 2)
(196) çure **alabançaen** beti esaten / egongo nayz, cein andiac diraden (SalmMis 64)
(197) Guiçon bat ebilen utra galduric / donzella eder **baten** servietan, / ceyñac amorez eben penaetan (Laz B3:23)
(198) **oguiaren** hartzea (Leiz Mark VII:27)

### *3.5.3. Linschmann-Aresti legea*

Euskararen testurik zaharrenetan, anaforak genitibozko izenordainen erabilera arautzen du. Izenordainak aipatzen duen pertsona perpaus bereko argumentua bada —ABS, DAT edo ERG—, izenordain bihurkaria erabiltzen da (*neure, heure, zeure, bere, geure, zeu(r)en, beren/euren*) (199-201); alderantziz, izenordainak ez badu erreferentziakiderik perpaus berean, izenordain arrunta (*ene, hire, zure, haren/aen, gure, zuen, haien/aen*) (202-203). Halere, testu frankotan (*RS,* Laz, Bet, Last, Utrg…) aurkitzen dira legearen urraketak (204-206); horrelakoetan, izenordain arruntaren aldeko aldaketa da maizena euskalki gehienetan baina bihurkariaren alde Bz.

(199) Cerren **ceuren** jauna ezcencan empara (ArrErr 5)
(200) Ni N. **neure** borōdate gustirean voto eguitē dot eta prometietā dot […] (Frantz 1)
(201) Joannis çuc arçen duçu Mariorj **çeure** emazteçat ? (Esp 5-7)
(202) Andia da **ene** mina, esan nay ta esan ezina (RS 114)
(203) Etorri gura dau **çure** esque (Laz AL: 1151r)

(204) Arren diguela **gure** andrea (Last 32)
(205) Pertenecietan jacaz [...] Iesu-Christo **gueure** iaun [...] santissimeari (Bet 95)
(206) Nic Martin y Joanna arçen aut neure alaroçaçat eta hic ar naçan **yre** esposoçat (Utrg)

### *3.5.4. Soziatiboko koordinazio zaharra*

Euskara Arkaikoan, modernoan bezalaxe, *eta* lokailua erabiltzen da sintagmak eta perpausak juntatzeko. Honekin batera, B (ArrErr, *RS*), A (Laz) eta G (SalmMis, Bret) arkaikoak egitura berezi bat darabilte han-hemenka bi izen koordinatzeko: '*X-gaz/-kin Y*' soziatibozko egitura. Zehatzago, koordinatu bi elementuetarik batek kasu soziatiboa jasotzen du, eta besteak biei (*zurekin nire artean* = 'zure eta nire artean'), edo sintagma osoari (*katua txakurrarekin dakartzat* = 'katua eta txakurra dakartzat') dagokien kasua, eskuarki absolutiboa edo genitiboa. Haien hurrenkerari dagokionez, *Xgaz/kin Y* da arruntena (207-209), nahiz eta *X Ygaz* gisako ordena ere lekukotu, X kasu absolutiboan delarik (210-212). Azkenik, aditza agertzekotan, pluraleko komunztadurarekin heldu da. Ondoko mendeetan, egitura horren arrastoak —fosilizatuak usu— euskalki gehiagotan lekukotu dira (ik. Lakarra 2008b eta 2. kap., § 4.4.6.8).

(207) Biz gloria **Aitearequin semearençat** 'Gloria izan dadila Aitarentzat eta semearentzat' (SalmMis 92)
(208) **Oguiag**az hura, oragaz heroen elicatura 'ogia eta ura, txakurraren eta eroaren elikadura' (RS 246)
(209) Gomiz Gonsalu[c]h bertan çan / **Beragaz Presebalen** caltean 'Gomiz Gonsalutx bertan zen / bere eta Presebalen caltean' (ArrsErr 34-35)
(210) Donostiaco yrian, Passagen embarcatu / **Onci andiac chipiaquin**, flota andia atera 'Donostiako hirian, Pasaian enbarkatu / ontzi handiak eta txikiak, flota handia atera' (Bret 10)
(211) **Mundu guztia ysasoagaz** / nançuçu, çaoz gueldiric 'mundu guztia eta itsasoa, entzun nezazue, zaudete geldirik' (Laz A10:3)
(212) Garcilaso traidoreac aguindu eben undaetan; / **Az chiquirra vioçagaz** lecarroela señaletan 'Garcilaso traidoreak agindu zuen itotzea; / hatz txikia eta bihotza ekar ziezaiola froga gisa' (Laz A25:36)
(213) Jauna, othoi indazu amaren bizia; / **amaren biziarekin aitaren libertatia** 'Jauna, otoi emaidazu amaren bizia; / amaren bizia eta aitaren libertatea' (Urtb 29)

### *3.5.5. -ra + laguntzailea*

Lekukotasun zaharrenetan, adlatiboan deklinaturiko izenak *izan, egon, *edun* aditzekin elkartu ohi dira izenak adierazten duen lekurako mugimendua adierazteko, *joan* bezalako

mugimendu aditzik gabe (214-216). Batzuetan, izenaren ordez, aditzondoa agertzen da (217-218).

(214) **Sayra noçu**, asper çaquidaz (*RS* 361)
(215) Çaurietan curadu eta, / ama, **nagoçu oera** (ArrErr 44-5)
(216) **Lastur-era bear doçu**, Milia (Last 5)
(217) Oroc **hara vehar dugu** escusatu gaberic (Etxp I:324)
(218) Gora ez **ebanac** ydoro ez eban (*RS* 343)

### 3.6. Lexiko arkaikoaz

***3.6.1.*** Lexiko arkaikoaren ezagutza asegarritik urruti gaude. Edozein hizkuntzatan legez lekukotasun zaharrak ikertuenak diren arren, —baita lexikoaren aldetik ere—,[140] ez dugu hain beharrezko genukeen 1600 arteko lexikoi edo thesaurus egokirik eta soilik oraintsu hasi gara garaiko lexikoiaren egitura orokorrari antzematen (cf. Blanco 2014; 2015). Azken hamarkadetako aurkikuntza berri txiki askok eta handiagoren batek (Lazarraga) ezin dute zuritu aspaldiko hutsune hori, bereziki Leizarragari dagokionez.[141] Hutsunea ez da bete testu guztiak *OEH*n sartuaz joan arren, eta berebiziko garrantzia luke hori konpontzeak edo apaltzeak testuon ikerketa eta edizioak hobetzeko, hots, azken batean, garaiko euskararen lexikoa sinkronikoki nahiz diakronikoki ezagutzeko, eta *OEH* beti ezinutzizko eta lehenetsiriko euskararen batasunaren beharretarako lanabes huts ez bilakatzeko.

140. Dagoeneko Azkue (1935), funtsean B zaharraz; bidenabar, haren hiztegian *RS*ek «VArc» deitura du, praktikan dialekto berezia bailitzan; haren hiztegiak (eta lehenago Larramendirenak) zerikusi handia izan du testu horretako hitz askoren (*endore, urgazle, bezuza, dollor*…) biziberritze modernoarekin. Ik., ordea, § 2.3.2 *bezuza, igini, ekix* eta beste zenbait hapax zalantzagarriz.

141. Arestiren hitz-zerrenda soila (1973) —garaiko zenbait helburutarako onuragarri izan arren—, urruti da beharrak asetzetik; *RS*ek, eta Etxeparek lexikoi bana baino gehiago dute (nahiz ez guztiak ekoizpen egokitasun berekoak) eta Betolatzak ere badu berea; Landucciren gazt-eusk hurrenkeraren itzulketa ere bada (ik. Knörr & Zuazo 1998), nahiz zuzendu beharko den Urgellek eskuartean duen hiztegi horren edizio berriaren ondoren. Arestian Endika Blancok eta Dorota Krajewskak burutu dute MLVkoen edizioan agertuko den Lazarragaren thesaurusa.

Landucciren hiztegiaren edizio berriak (Urgell, prestatzen) aurrekoak (Knörr & Zuazo arg, 1998) baino alderantzizko hiztegi hobea izango du, besteak beste; alabaina, aurrerapen handienak gazt.-eusk. hiztegia gainerakoekin (gazt.-ital., eta gazt.-fr.rekin) erkatzetik eta iturriaren bilakabideak euskarazko alderdiaren lekukotasunean duen eraginaz ondorioak ateratzetik bide datoz; izan ere, arazo garrantzitsu baina atzenduak ziren hauek (ik. § 4.4).

3. TAULA: EUSKARA ARKAIKOAREN LEXIKOA: LEHEN HURBILKETA

| Hitzak | Kopurua |
|---|---|
| Euskararen ondare zaharrekoak | 678 (%58) |
| Bakunak | 430 (%37) |
| Eratorriak | 157 (%13) |
| Konposatuak | 91 (%8) |
| Maileguak | 477 (%41) |
| Zalantzazkoak | 15 (%1) |
| **Guztira** | **1.170** |

(Blanco 2015etik: 1. taula)

4. TAULA: EUSKARA ARKAIKOAREN LEXIKOAREN NOLAKOTASUNA TESTUZ-TESTU

| | RS | Zgz | Is | Zm | Etxp | Oih | Bela | Leiz | Mis | Laz | Bet | Guzt. |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| Ondare zaharrekoak | 152 %78 | 80 %66 | 55 %66 | 26 %81 | 128 %59 | 225 %72 | 21 %70 | 431 %57 | 17 %59 | 142 %49 | 44 %63 | **1321** |
| Bakunak | 128 %66 | 69 %57 | 36 %43 | 25 %78 | 99 %45 | 166 %53 | 19 %63 | 275 %37 | 17 %59 | 125 %43 | 37 %53 | **996** |
| Eratorriak | 17 %9 | 7 %6 | 7 %8 | 1 %3 | 10 %5 | 34 %11 | 1 %3 | 106 %14 | 0 | 6 %2 | 6 %9 | **195** |
| Konposatuak | 7 %4 | 4 %3 | 12 %14 | 0 | 19 %9 | 25 %8 | 1 %3 | 50 %7 | 0 | 11 %4 | 1 %1 | **130** |
| Maileguak | 36 %19 | 38 %31 | 26 %31 | 6 %19 | 89 %41 | 84 %27 | 8 %27 | 316 %42 | 12 %41 | 145 %50 | 26 %37 | **786** |
| Zalantzazkoak | 6 %3 | 3 %2 | 2 %3 | 0 | 1 %0,5 | 5 %2 | 1 %3 | 5 %1 | 0 | 3 %1 | 0 | **26** |
| Guztira | **194** | **121** | **83** | **32** | **218** | **314** | **30** | **752** | **29** | **290** | **70** | **2.133** |

(Blanco 2015etik: 2. taula)

***3.6.2.*** Sarasolak zioenez (1997: 621), 1550 arteko lehen agerraldien kopurua apala da, ordu arteko euskal testuak ere gutxi direlako, jakina. 486 agerraldi horietako gehienak Etxepareren liburuari dagozkio. Ondoren bi mende erdi oparo datoz, 1.a Leizarragaren obra erraldoiaren ondoriozkoa, eta 2.a Sarako taldeko lapurtar klasikoen lanaren emaitza biltzen duena. Gero, mende bat irauten duen beheraldia dator, Iparraldeko literaturaren krisia islatzen duena».

5. TAULA: EUSKARA ARKAIKOKO LEHENENGO LEKUKOTASUNAK

| | RS | Zgz | Is | Zm | Etxp | Oih | Bela | Leiz | Mis | Laz | Bet |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| Ondare zaharrrekoak | 152 | 40 | 31 | 11 | 70 | 97 | 2 | 241 | 4 | 29 | 1 |
| Bakunak | 128 | 32 | 14 | 11 | 46 | 56 | 2 | 117 | 4 | 19 | 1 |
| Eratorriak | 17 | 6 | 6 | 0 | 8 | 26 | 0 | 90 | 0 | 4 | 0 |
| Konposatuak | 7 | 2 | 11 | 0 | 16 | 15 | 0 | 34 | 0 | 6 | 0 |
| Maileguak | 36 | 35 | 20 | 4 | 72 | 42 | 1 | 203 | 4 | 58 | 2 |
| Zalantzazkoak | 6 | 2 | 0 | 0 | 0 | 2 | 0 | 3 | 0 | 2 | 0 |
| 1. lekukotasunak Guztira (1170) | 194 | 77 | 51 | 15 | 142 | 141 | 3 | 447 | 8 | 89 | 3 |
| Hitzak Guztira | **194** | **121** | **83** | **32** | **218** | **314** | **30** | **752** | **29** | **290** | **70** |

(Blanco 2015etik: 4. taula)

Datu horiek berrikusi eta berrantolatu behar ditugu § 1.1 eta § 2.1 ataletako corpusaren egitura eta kronologia aldatzeko proposamenak jarraituaz: hots, *RS* ez Leizarragaren atzetik baizik 1500 aurreko lehen testu zabal gisa hartuaz eta Oihenarten errefrauen hizkera ez 1657kotzat mende bat lehenagokotzat baino, Etxepare eta Leizarragarenaren tarteko edo. Hainbat dira, beraz, aldatu beharreko 1. agerraldiak, funtsean Leizarragak (baina baita inoiz Etxeparek ere) errefrau bilduma eta kantu zahar horien edo txikiagoen alde galduaz:[142]

*RS*ko (= ~1496) dozena bat lehen lekukotasun berri biltzen ditugu —*har* (1571), *abere* (1562), *adar* (1545), *adiskide* (1545), *aditu* (1545), *afaldu* (1571), *ageri* (1545), *hagin* (*1562, 1627), *ahaide* (1545), *alaba* (1545), *alargun* (*1562, 1571), *aldatu* (1571)— testuko 50 sarrera baino gutxiagotan, Sarasolaren Hiztegian tokirik ez duten izen propioez eta estandarretik urruti gelditzen diren beste zenbaitez landa.

Arrasateko Erreketaren Kantuak ere (~1448) oso hitz garrantzitsuen lehen agerraldiak aurreratzen ditu: *irten* (*1562, 1610, *urten* 1596 [RS, *benetan* ~1496]), *etzan* (1545), *lagundu* (1571), *lagun* (1545), *urrun* (1571), *kalte* (1571), *laster* (*1562, ~1580), *eman* (1545) testuko; izatez, *lagun* dagoeneko Pedro Abendañokoren eresian (1443) agertzen da eta han da *enendorque* ere, Sarasolaren *etorri* (1539) ia mende bat aitzinatuaz.[143]

---

142. Hein batean Laz-ren kuadernoak eta, neurri apalagoan, Ros eta Etxarten gutunek beteko lukete Leiz eta Materra arteko zulo markagarria, Bet urria eta Azkoitiko (1614) eta Errezilgo (1621) lekukotasun aberatsagoekin batean.

143. Honenbestez, *Euskal Hiztegia*-n ez diren **ezan* eta **edin* lekukotu ahalko genituzke eta baita **edun* ere (honen forma jokatuak eta **ezan*-enak *izan*-en pean agertzen dira), nahiz hori gutxienez glosa famatuetako *jzioqui dugu* eta *guec ajutu eztugu*-raino ere eraman litezke

Sarasolaren arabera 362 eta 1.009 dira [1600 arteko 1.696tik] Etxeparek eta Leizarragak euskararen hitz altxorrera dakartzaten 1. agerraldiak; kalkulu berriak (Blanco 2014: 23), aldiz, 142 eta 447 [1600 arteko 1.170etik] ematen dizkiete, aurrekoaren erdia baino gutxiago bietan. Blancok ikusi bezala, «errefrauak sortu bide ziren beren hizkerari dagokion garaikotzat hartzeak nabarmen aldatzen du 1.go agerraldien argazkia».[144]

6. TAULA: EUSKARA ARKAIKOKO LEXIKOA LEIZARRAGAREKIN ETA LEIZARRAGA GABE[145]

| Hitzak | Kopurua guztira | Leizarraga bakarrik | Leizarraga gabe |
|---|---|---|---|
| Ondare zaharrekoak | 678 (%58) | 223 (%56) | 455 (%59) |
| Bakunak | 430 (%37) | 103 (%26) | 327 (%42) |
| Eratorriak | 157 (%13) | 86 (%22) | 71 (%9) |
| Konposatuak | 91 (%8) | 34 (%9) | 57 (%7) |
| Maileguak | 477 (%41) | 174 (%44) | 303 (%39) |
| Zalantzazkoak | 15 (%1) | 3 (%1) | 12 (%2) |
| Guztira | **1.170** | **400** | **770** |

(Blanco 2015etik: 3. taula)

***3.6.3.*** Leizarragaren TB eta enparatuek garaiko lexikoaren egituran dakarten asimetria bistakoa da kopuruei dagokienez.[146] Ordea, testu hori ez dugu bertan sortua, itzulia

*EHHE*n bezala.

144. Are gehiago, gogoan izanik (Sarasolari nahiz Blancori) balada, eresi eta gainerako testu laburren datuak zehazki hustutzea eta islatzea falta zaiela kalkuluotan. Oih (141) eta Bela (3) 1550 ondokotzat hartuaz garaiaren azken mende erdiak (691) nagusigoa mantenduko luke gainerakoaren aurrean (479) baina ez Sarasolaren kalkuluko heinean.

145. Emaitza orokorretako kopuruetan ere, *EH*an ez diren hitzak kontuan hartzeak badauka eraginik; nagusi izaten jarraitzen duten ondare zaharreko hitzen (%57 > 54) eta maileguen (%41 > 44) arteko aldea txikitzen da. Hala ere, aldaketa hau bi autoretan da esanguratsu bereziki, Leizarraga eta Lazarragarengan, alegia.

146. Sarasolaren hiztegiaren izaera ezagunagatik hainbat da bertan sartu ez dena: mailegu gordin, jarraipen gabeko eratorri… Blancok (2014) testuetara eta bestelako lexikoietara joaz kanpoan utzitakoa aztertu du: *EH*n ageri ez diren hitz kopuru esanguratsua daukatenak *RS* (20), Oih (16), Laz (41) eta batez ere Leiz (151) dira. Lehen hiruretako hitzok ez dute orain arte lekukotasun horiez eraiki argazkia ezer aldatzen (*RS* eta Oih.ren kasuan ondare zaharrekoak eta Laz-renean maileguak dira gehienak berriro) baina bai Leiz-renean: honetan horiek saihestu ondoren %29 ziren ondaren zaharrekoak %24 jaisten dira eta mailegatuak %28tik puntu bat igotzen (Blanco 2014: 76-77). EHtik kanpora gelditutakoak ere sartuko bagenitu Euskara Arkaikoaren lexikoiaren barnean ezinbestean, testuan emandakoak aldatu eta ia-ia Leiz-ren berrietara mugituko lirateke.

baizik (eta originalari erabat loturik, gainera! cf. § 2.5.1) eta, horrenbestez, urruti da bere tamainako hainbat lekukotasun sakabanatuk garaian benetan erabili hitz ondarea islatzeko izango lukeen ahalmenetik. Labur, duela 2.000 urteko Palestina eta inguruetako geografia eta bizimoduari edota Erromatar zibilizazioari dagozkienak biltzen dira, funtsean, ez 16. mende akabuko Euskal Herrikoekikoak.[147] Gertakari horrek azaltzen du *dromedario* eta are *tabernaklegile, sabatgoa,* azaltzea eta ez hainbat hitz arrunt ondare zaharrekoak. Horri gehitzen badiogu (*giza)-peskadore, flore* eta *rege* dakartzala, Leiz-ren lekukotasun lexikoa *cum mica salis* hartu behar, gramatikazkoaren zenbait alderdi bezala (cf. § 2.5.1.2 eta hh.).

***3.6.4.*** Dagoeneko erakutsi denez, markatzekoa da garai honetan ahozkotasunak (dela balada eta eresien, dela —batez ere— errefrau bildumen bitartez), hizkuntzaren historiaren beste edozein garaitan baino tamaina erlatibo eta are absoluto larriagoa duela.[148] Hizkuntz historialariarentzat are estimagarriago dira ahozko lekukotasun hauek ia oso-osorik bazterretako euskalkietan (A eta B, mendebalean, Z ekialdean) gauzatzea eta gainerako zati txiki bat (Isasti) gerora G eta GNren muga bilakatuko den eremuan, hain zuzen ere.

***3.6.5.*** Hapax absolutoak (formaz nahiz esanahiaz) edo erlatiboak (soilik adiera jakin batean) asko dira corpusaren laburra gogoan izanik. Bitxi da horietako zenbaitek (*RS endorea, narea*, etab.), mailegu sartu berrien itxura izatea, gero tradizioan arrasto iraunkorrik utzi gabe itzali baitira. Beste asko ez dira guganaino zuzenean iritsi —are *dollor* bezala oso hedatua zen zenbait (ik. Corominas & Pascual, s.u. *trollo* eta Lakarra 2003)— eta soilik ondoko hiztegigileen bitartez (usu adiera aldaketekin) ditugu euskal tradizioan txertatuak: hori da *RS*eko askoren kasua (Larramendi eta Azkueren bitartez); Leizarragaren hitzak ere abondo Pouvreauk bildu (cf. Etxagibel 2014) eta Larramendik zabaldu zituen zenbait (cf. Urgell 2000) Materra eta Axularrek ere erabili ondoren.[149]

---

147. Besterik da ia 16 mende lehenagoko haiek edo haietariko asko oso bizirik izatea Leiz-ren Euskal Herrian. Areagotu egiten da Zumalabek lehenago edo Aginagalde-Urgellek (2012) oraintsu eskuratu hiztegitxo herrikoien balioa; orobat kanpoko ereduaren morrontzarik ez duen Leiz-ren Zko hitzen bildumatxoarena ere (cf. § 2.6.2).

148. Halaz guztiz, ez dira ahazteko hauetan gertatu zenbait manipulazio (cf. Oih, Zalgize eta, beharbada, Bretañako Kantorea).

149. Larramendiren *Hiztegi Hirukoitz*ak aurreko garaietako lexikoia osatzeko (batez ere urriago den Hegoaldekoa) duen balioa ez da oraindik aski aitortu edo zabaldu, Urgellek (2000) argudio eta datu aski eman arren. Bertan aurkitzen dira hainbat hapaxen kideak (*alagoza* 'dote', cf. Nafarroako ezkontza-zin bateko *alaroza* 'novia, esposa', beste askoren artean; *ConTAV* § 5.2.2) eta baita beste asko, artean lekukotugabeak edo gaizki lekukotuak ere. Ez bide litzateke alperreko

***3.6.6.*** Ezaguna da hizkuntz ezaugarrien geografia dialektala aldakorra dela oso eta are aldakorrago hitzen hedadura. Honen berme ditugu *RS*eko *oro* eta *etsai*, *kibel* 'espalda', *ate* 'fuera' eta beste asko gero ekialdekotzat hartuak, Isastiren zenbait gero mendebalekotzat joak, Lazarragaren *eradutsi*ren formak eta *erran* (*mezaerralea* ere bada Landucciren *Bocabulario*an), etab., gero GN-, B- edo iparraldekotzat sailkatuak; gogora, orobat, Mitxelenak (1964a)n Gko testurik zaharrenetan XX. mendean iparraldekoek baino ulertzen ez zituzten formak gogoratu zituela.

***3.6.7.*** Mailegu askoren lehen lekukotasuna (ondare zaharreko beste berba askorena bezala) Euskara Arkaikoan dugu ezinbestean.[150] Horien artean, dagoeneko egoera oso diferentean dira (geruza ezberdinetako ere izanik), latin zaharretik mailegatuak (*bake, gauza*), latin berri eta erromantze zaharretik eta berriagotik hartuak (*zeru/zelu*), gaskoi eta bearneskoak (*alha, olha, elhe, eme, orhoit, polit*), nafar erromantzetikoak, gaztelaniatik nahiz arabetik hartuak (*atorra, alaroza*); cf. bi ahapaldi beherago.

***3.6.8.*** Blancoren (2014) datuetarik, Euskara Arkaikoan ondare zaharreko hitz soilak (sinkronikoki konposaketa eta deribaziorik gabekoak) 430 dira, % 28 maileguak, % 22 eratorriak eta % 7 konposatuak (enparatuko % 3 etimologia ezezagunekoa dugu).[151] Ondare zaharrekoetan aipatzekoa da *RS*en eta Zalgizeren nagusigoa (% 55 eta % 63, hurrenez hurren), nahiz Leizarraga eta Lazarraga kenduaz (% 29, % 34) gainerako guztiak % 41etik gora izan. Maileguetan, Lazarragarengan dira ugarienik (% 34) eta gero Leizarraga (% 29) eta —itxarotekoa zenez— *RS*en (% 13) eta Oih.en (% 18) urrien, nabarmen delarik generoaren eta hitz mota honen erabileraren arteko lotura. Poesia (Etxeparek % 24 du) tartean gelditzen da, ahozko hizkeratik errefrauak bezain gertu ez baina ezta itzulpenak bezain urruti (Blanco 2014: 75). Mailegatuen jatorria aztertuz, gehienak (% 37) hizkuntza erromanikoetarik datoz, nahiz horiek baino ugariago izan latinetikoen (% 25) eta aitzinerromantzetikoen batura (% 18). Eremu semantikoak aztertzean kontzeptu abstraktoak (% 22) eta elizarekin lotuak (% 13) dira lehenik, baina tresneria eta teknika berrien gainekoak (% 15) lexiko sail honetan izandako ekarpena azpimarratzen du (Blanco: ibid).

---

*OEH*ren aurrelanetarako egin gazt-eusk > eusk-gazt itzulketa ikertzaileen eskutan jartzea.

150. Erdiaroko lekukotasunak sistematikoki aztertzen ez diren bitartean behintzat, lehenago ere onomastikak hainbaten berri ematen digu: *pentze, zaltu, muru, eliza*… *OEH*n baziren honelakoak baina sistematikoago biltzen dira *EHHE*n.

151. Hark aztertutako corpusak A- eta B- letrak biltzen ditu, 1.170 sarrera 5.000 ingurutik, % 23 edo.

7. TAULA: EUSKARA ARKAIKOKO ERATORPEN HIZKIAK

| Hizkiak (adibidea) | Kopurua | Hizkiak (adibidea) | Kopurua |
|---|---|---|---|
| *[**-antza**] *(aliantza)* | [2] | **-kunde** *(aiherkunde)* | **[1]** |
| **-arazi** *(bilarazi)* | **9** [5] | **-kuntza** *(azarkuntza)* | **[1]** |
| *[**-ari**] *(bekatari)* | 9 [8] | **-le** *(atzemaile)* | **3** [1] |
| **-dun** *(adardun)* | **5** [2] | [**-men**] *(aipamen)* | **4 [-2]** |
| *[**-dura**] *(beztidura)* | [3] | *[**-mendu**] *(adimendu)* | [6] |
| **-eta** *(ahurreta)* | **1** | *[**-os(o)**] *(animoso)* | [8] |
| **-garren** *(bigarren)* | **4** | **-ro** *(biziro)* | **2** |
| **-garri** *(asegarri)* | **6** [1] | **-(t)ar** *(barrundiar)* | **1** |
| **-gile** *(behargile)* | **2** [1] | **-tasun** *(arintasun)* | **16** [3] |
| **-gin** *(behargin)* | **1** | *[**-tate/**-dade] *(autoritate)* | [8] |
| **-ka**$_1$ *(apaka)* | **1** | **-ti** *(beldurti)* | **3** [1] |
| **-ka**$_2$ *(buruka)* | **3** | **-tsu** *(bizartsu)* | **6** [2] |
| **-ka**$_3$ *(aldizka)* | **2** | **-txo** *(arrosatxo)* | **4** [1] |
| **-(k)ari** *(barazkari)* | **5** | **-tza/-tze** *(bizitza)* | **6** |
| [**-keria**] *(alferkeria)* | **3 [-2]** | **-tzaile** *(biltzaile)* | **16** [12] |
| **-ki**$_1$ *(biziki)* | **19** [6] | *[**-tzia**] *(abondantzia)* | [5] |
| **-ki**$_2$ *(bernazaki)* | **2** [1] | *[**-zio**] *(admirazio)* | [12] |
| **-(k)izun** *(amaizun)* | **4** | **-(z)ko** *(ahozko)* | **25** [5] |
| **-ko (-go)** *(ahaiko)* | **1** | [**erre-**] *(arregin)* | **1** |
| **-(k)or** *(berankor)* | **4** | | |
| Guztira | | | **157 [99]** |

***3.6.9.*** Eratorpen atzizkietarik (40 bat) hiru laurdenak ondare zaharrekoak dira, eta *-tu* eta *-(z)ko* alde batera utziaz, *-ki, -tasun, -tzaile, -ari, -tza* eta *-zio* dira erabilienak. Atzizki hauek hartzen dituzten oinarriak aztertuaz, hizki mailegatuek oinarri mailegatuak hartzeko joera handia dute eta alderantziz ondare zaharrekoek, nahiz hauetariko batzuek eratorpena oinarri mailegatuetara hedatu dutela dirudien (oraindik horrela dira gauzak XVIII. mendearen lehen zatian; cf. Lakarra 1997a). Autoreka, Leiz-ren ugaritasuna (% 23) eta Laz-ren urritasuna (% 8) dira aipagarrien hitz eratorrietan.

***3.6.10.*** Aurreko datuak ikusirik irakurlea ohar litekeen legez, Leizarragaren testuaren bolumen erraldoiak baldintzatzen ditu emaitza orokorrak, gainerakoek ez dutelarik zereginik haren emaitzen aurrean.

## 4. GRAMATIKOGRAFIA

### 4.1. Hizkuntz ideiak[152]

Errenazimenduan ugaltzen hasten dira Europako hizkuntza bernakularren deskribapenak. Lehenagotik gaelikoak eta islandierak, galesak eta probentzerak bazuten horrelakorik, baina XV eta XVI. mendeetan deskribatzen edo normalizatzen dira gramatika eta hiztegien bitartez italiera, gaztelania, frantsesa, portugesa, alemaniera eta ingelesa hizkuntza «handien» artean eta baita txekiera, hungariera, poloniera eta (partez) euskara bera ere estatu-hizkuntza estatusik gabekoetan; halaber, Ameriketan ere nahua, kitxua, guarania eta beste zenbait.

Europa osoan, —are hizkuntza erromantzez mintzo zirenen artean— latina urrundua zen hiztunen egunoroko hizkeratik eta administrazio, kultura eta erlijioko 2. hizkuntza bilakatua gutxi batzuentzat, germaniar eta zelta herrietan nahiz ekialdeko zenbaitentzat bezala. Aipatu hizkuntza askoren gramatizazioa lotua da estatu berrien eraikuntzarekin, boterearen zentralizazioarekin eta lurralde eskubideen aldarrikapenarekin. Honetarako latina ez zen gai eta herri-hizkuntzek —hainbat apologia saioren bitartez hauek ere eder, erregular eta egoki zirela eta latinaren tokia har zezaketela erakustea lortu ondoren— estatu-hizkuntzak kodatzen dira erregelen bitartez, administrazioaren jardunerako lanabes izan daitezen. Gramatizazio prozesu honetan (cf. § 1.2) berebiziko garrantzia izango dute halaber inprimategiak eta Erreforma protestanteak.

Euskararen apologistek ez dute, *mutatis mutandis*, ezer berezirik aldarrikatuko (ik. Barandiaran 2016): beren hizkuntza Babelgo 70/72etarik zela, Peninsulan zaharrena eta noblezia eta duintasunez hornitua, hari buruz gramatika idazteko erregulartasun eta egokitasunez betea, askok uste ahuntz-erdaretarik urruti.[153] Ideia hauen isla bada Etxepare, Leizarraga zein Lazarragarengan —A6:47-9 «Eusquel Erriau oy nola eben / erregue batec pobladu / gente noblez da lenguageaz»—, baina usuenik apologistatzat erdaraz bere herriaren eta hizkuntzaren alde idatzi zutenak, eta gerora galdu edo eraldatu diren mito historiografiko zenbait (tubalismoa, eusko-kantabrismoa…) defendatu zituztenak hartu ohi dira: Garibai, Zaldibia, Poza, Isasti, Etxabe eta hurrengo mendeetan Larramendi, Astarloa eta enparatuak. Ibarren *Genio y lengua*-z (1936) geroz ikuspegi ukroniko eta desbideratuko euskaltzale askok horien ahulezia teorikoak eta praktikotasun falta salatu izan ditu garaiko Europan kokatzen saiatu gabe, are bi

---

152. Atal honetarako ik. Gomez & Urgell (2010) eta han aipatu erreferentziak; orobat Madariaga (2008 eta 2015).

153. Bat milaren artean: «One way of legitimizing German was to argue that it was 'an ancient and venerable language' (…) A language that after Babel 'would still have been a divinely inspired, very regular and inherently valuable language'» (Salmons 2012: 278).

alderdioi dagokienez. Euskararen izaera bakarraz landa —xix. mendean hizkuntzalaritza historikoa garatu arte hori azaltzeko Babelgo Dorrearen mitoa zen estandarra herri kristau orotan—[154] eta kratilismoa (hitzen forma eta esanahiaren arteko erlazio naturala) aurkitzen ditugu euskarari buruzko idatzietan. Partikularrago dirudien tubalismoa ere (Jafeten seme eta Noeren biloba Tubalek ekarri omen lehen hizkuntza) ez da urruntzen garaiko teknika apologetikoetarik: hori bai, euskara du identifikatzen harekin, eta ez kaldeera edo gaztelania,[155] demagun.

Kantabrismoak euskaldunak erromatarren garaiko kantabriarren ondorengotzat jo eta inoiz garaitu gabeko herritzat egiten zituen —Oihenarten aurkako iritziaz geroz Florezek 1768an mitoaren oinarriak deuseztatu arte—, horrenbestez euskarak mende horietan guztietan aldatu, endekatu eta nahastu gabe iraun omen zuelarik. Horrek, noski, garaiko euskaldunen antzinatasun, noblezia eta odol-garbitasuna zekartzan berarekin, eta euskararen antzinatasun eta orokortasunak lotura zutelarik euskotarrek espainiar Gortearen aitzinean aldarrikatu eta harenganik eskatu pribilegioekin.[156] Izan ere, hizkuntzaz idazten dutenetarik gutxienak dira Pozaz landara hizkuntza bera gai nagusitzat edo beregaintzat hartzen dutenak.[157]

Sibiliako Isidorok zabaldu zuen Flavio Josefok eta San Jeronimok Kaukasoko Iberiatik Mediterraneo Mendebalekora egindako jauzia. Geroztik Tubalen lurraldea *Ibero* ibaiaren inguruetakoa izango da. Garibai iturri ezberdineko tradizioak konbinaturik horren eta eusko-iberismoaren eragile dugu. Alabaina, Antzinateko Hispaniako elebakartasuna goizetik jazartuko dute, Alonso de Madrigal, Ambrosio de Morales eta Juan de Marianak; azken honek klasikoetarik jaso pare bat dozena hitzek (ez baitziren euskaraz gordetzen) eta Estrabonen lekukotasunak —honek Iberian hainbat hizkuntza eta idazkera zirela zioen— euskararen orokortasunaren aurkako argudio nagusi bilakatu

154. Frantzian galoak Noerengandik datozela eta Alemanian germanoak Tuistorengandik defendatu zen; bestalde, frantsesa bera noiz galieratik, noiz grezieratik, noiz latinetik. Holandera, ingelesa zein alemaniera Babeldik eratortzeko saioak nahi beste dira, are gaztelania bezalako hizkuntza erromantze batentzat ere.

155. xvi.aren 2. zatian eta xvii.ean «gaztelania primitiboaren» teoriak indar handia hartu zuen Espainiako hainbat hizkuntzalariren artean (are egun ospetsu diren Correas edo Jimenez Patón bezalakoenean), López Madera zelarik bere defendatzaile nagusi.

156. Horrek izan zuen kontrakarrik, jakina: cf. Marianaren «Sólo los vizcaínos conservan hasta hoy su lenguaje grosero y bárbaro, y que no recibe elegancia, y es muy diferente de los demás» (*Historia general de España* 1601: I,5). Bada honelakorik Aymeric Picaud ondoko hainbat bidaiariren hurbilketa usuenik axalekoetan.

157. Hizkuntzazko argudioen artean toponimia, maileguak —gainerako hizkuntzetan omen diren euskarazko hitzak— eta ohiko etimologiagintza kratilista ditugu lanabes erabilienak.

ziren. Aldretek, gainera, gaztelania latinetik «kutsaduraz» zetorrela (hori zen garai hartan hizkuntza aldaketaren arrazoia) erakutsi zuen, hark astiro-astiro Peninsulan ziren euskaraz gainerako hizkuntzak ordezkatu ondoren.

Euskararen inguruan idazten dutenen artean Pedro de Madariaga (1565), Zaldibia (c. 1564), Garibai (1571) eta Poza (1581) ditugu garrantzitsuenak. Lehena ez da oraindik tubaldarra, eta euskara kaldeeratik datorrela diosku —ez hebraiera zaharrenetik— zabalduak ziren haren garbitasun eta orokortasunari buruzkoak landa. Etxeparek bezala, euskaldunek beren hizkuntzaz zuten axolagabekeriaren ondorio gaiztoak ere aipatzen ditu.[158] Zaldibia tolosarraren *Suma de las cosas cantábricas*-en ohiko ideien errepikaz landa, Erdi Aroko kanturen bat eta zenbait ohar gramatikal labur aurki liteke. Bada honelakorik —baita Idiaquez kortisauaren eskariz osatu bi errefrau sorta ere— Garibairen lanen artean (cf. § 2.3.1). Gero Pozak legez, Ameriketan garaikideek zuten jokabideari kasu eginez, toponimiari heltzen dio euskararen jatorri tubalikoa frogatzeko. Hortik datoz hurrengo mendeetan famatuko diren Kaukasoko *Araxes* eta *Araiça* (Orio), Armeniako *Ararath* eta Nafarroako *Aralar* eta beste hainbaten erkaketak, hola-halako hoskidetasunetan oinarrituaz. Haur-hizkuntza ere (*taita* 'aita', *mama* 'ama') euskararen naturaltasunaren alde erabiliko du lehendabizikoz eta bere idazkietan garaiko euskararen egoeraren zenbait zertzelada emango, hala nola Ternuako euskaraz, hizkera ezberdintasunaz (honetaz cf. IC kronika) edo hainbat gramatika ohar.

Andres de Pozak Lovainan eta Salamancan ikasi zuen eta Flandesen monarkia austriarraren burokrazian eta bertakoen aurkako sarraskietan postu garrantzitsuetan aritu ondoren, nautika irakasle izan zen aldi batez Donostian (ik. Coseriu 1975, 1987, Gorrotxategi 1987a, Juaristi 1991 eta 1992). 1587an argitaratu zen Bilbon haren *De la antigua lengua, poblaciones y comarcas de las Españas, en que de paso se tocan algunas cosas de la Cantabria*. Kratilismoari eta haren etsai juduen kabalari ere lotuaz, Pozak kaldeeraren aurka euskararen orokortasuna defendatzeko autore klasikoak eta Peninsulako toponimia darabiltza. Lehenik, hor hizkuntza bakarra zela defendatzen du, hebraiera eta euskaraz atetikoak inbasio berantiarren bitartez azalduaz. Bere liburuan Europako hizkuntzen sailkapena ere ematen digu, garaiko hoberenetarikoa (Coseriu 1987) —errumaniera erromantzeen artean kokatuaz, esaterako, gutxik legez garai hartan— eta ondoren Espainiako hizkuntzen zerrenda, ordena kronologikoan. Orobat, § XII.ean euskararen beteginzarrea dakar, hizkuntza naturala zela frogatuaz, hauek eta lehen-hizkuntzak («lenguas matrices») berdinduaz eta hauei hizkuntza deribatuak

158. Ideia hau zabaldua zen mendeotan beren hizkuntzak arautzeko eta idatzizko jartzeko asmoa zutenen artean; cf. oraindik hurrengo mendean Schottelius alemaniarra; ik. Lakarra (1993, 1995b) eta hor aipatutako bibliografia.

kontrajarriaz. Hainbat hitzen azterketa etimologikoa dator froga gisa, kratilisten erara: hitzak erroka zatitu, erroen esanahitik hitzen jatorrizkoa atera eta esanahi ezkutu hori beste hizkuntza batzuetan duenarekin erkatuaz:[159]

> *Eriotcea*, significa en Vascuence la muerte, y significa golpe, herida, o accidente frío, en que se encierra una breve substancia philosóphica. Porque como la frialdad sea enemiga de la generación y de la vida, y la vejez fenezca en esta frialdad, assí para que sepamos lo que es muerte, se nos deletrea por el oppuesto de el calor templada, o lo caliente y húmedo predominante en que la vida se conserva. *Mors* en Latín, *Thanatos* en Griego, *doot* en la lengua Septentrional, sólo nos significan la muerte a secas, sin otra doctrina alguna, excepto que el Septentrional no dexa de apuntar que la muerte es una resolución, o derretimiento de humores (34v).

Lehen-hizkuntzetako hitzek esanahi erantsia dute, berezko jakituriaren adierazgarri, esentzia, gauzen natura erakusten duena. Gizakiak erdietsi nahi duten ezagutza nagusia natura jainkotiarra da eta euskarak horretan gainerakoei abantaila hartzen, Jainkoak horretan (ez hebraieraz) erakutsi nahi izan baitu Hirutasunaren Misterioa (eta bokalen bitartez, ez haren ohiko kontsonante-bidez): *iaun* < *ieaoun* = *i-a-on*, hots 'Aita + Semea + Espiritu Santua».[160]

Gorrotxategik (1987a: 679-680) Pozak beren-beregi aipatu 40 bat hitz zerrendatzen ditu eta baita beste hainbat suposatu behar direnak haren argudio etimologikoak ulertzeko: oro har, oinarrizko lexikoa gehi morfema gramatikalak dira eta nekez aurki liteke bertan lehen lekukotasunik. Gorrotxategiren analisitik ateratzen denez, Pozarena lekukotasun zaharren artean *RS*en hizkerari lotzen zaio hurbilenetik, Landuccirenetik argiro aldenduz. Gertakari hau ez da harritzekoa garaiko bizilekuko euskarari (Bilbao) eta ez ustezko sortokiari (Urduña) lotuko balitzaio; *guey* / *dei* edo *are* / *bare* bezalako bikoteek ere bide horretatik garamatzate. Bada, halere, «*Duero*» (NR, 18r) «en Bazcuence

159. Euskaraz landa Pozak beste hainbat hizkuntza ezagutzen zuen: gaztelania, latina, nederlandera, ingelesa, frantsesa, italiera eta baita grekera eta hebraiera apurren bat ere, itxuraz.

160. Grafiaz ik. § 3.1 eta hango erreferentziak. Gramatikaren zenbait alderdi ukitzen dira XVI. mendeko lan historikoetan, beti ere asmo apologetikoarekin: Marineo Siculok (1530), Zaldibiak eta Gar.ek izen arruntek sing. *-a* eta plur. *-ac* dela dioskute, horretarako alfabetoko 1. letra erabiltzea goraipatuaz; azkenak, orobat, hizkuntzak aditz maskulinoak eta femeninoak bereizten dituela markatzen du, 2. pertsonako sujetoaren arabera: hots, soilik hebraierak («munduko lehenak», ez latinak, ez grekerak) duen edertasuna. Honetan hurrengo mendeetan bat etorriko zaie Etxeberri Sarako lapurtarra baina ez Oih zuberotarra —zeinek artikuluaren eransketa kausituko duen—; batzuen eta bestearen zuhurtziaz landa, Mitxelenak erakutsi zuenez baduke honetan eraginik Zren eta gainerakoen arteko azentu diferentzia larriak. Ik. § 2.3.6ren akabuan.

alabez significa locura» baieztapen bat ez bide diona inori zor eta Poza eta Urduñaren arteko edozein loturaren kontra liratekeenak laguntzen ere ez dituena, argiro.

### 4.2. Hiztegigintza: I. Hitz zerrendak

Done Miliagako bi glosez (xi.m.) eta Aymeric Picauden zerrenda laburraz (xii.m.) geroztik, Arnold von Harffen (1496-9) zailtasunez betea ditugu. xvi.ean Marineo Siculoren hiztegitxoa (1530) edo Venturino da Fabrianorena (c.1571) eta bereziki (beste hainbaten iturri izan baitzen) Bonaventura Vulcaniusena (1597): 101 sarrera —gainerakoak askozaz laburragoak dira— hurrenkera alfabetikoan Leiz-ren testuetarik eta lehenagoko Siculorenetik bederen hartuak, bidenabar huts askorekin TB-tik ateratakoetan.[161]

Euskaldun batek osatutako lehen hiru hitz-zerrendak 1571an argitaratu TBaren itzulpenekoak dira: *Testamentu Berrian diraden icen propri Hebraico eta Greco batzuén* [28] *declarationea, Testamentu berrico hitz eta minçatzeco manera difficil bakoitz batzu* [94] *bere declarationéquin* eta *Çuberoaco herrian vsançatan eztiraden hitz bakoitz batzu hango ançora itzuliac*. Lehen biak ez dira tradizio biblikoari zor zaizkion eredu frantsesaren moldaketa eta itzulpen baizik; halere, markagarri da hainbat lehen agerraldi (eta are bakarrak) direla, usu absolutibo mugagabean («Beth-leem *ogui-etche*») eta baita mailegu zailen moldaketak eta neologismoak sortzen Leiz-k egindako lana, *hard word tradition* delakoaren modura (Lakarra 1993).

Hirugarren zerrenda da famatuena, Zren berezitasunen lehen lekukotasuna baitugu, TB ekialdeko euskaldunei hurbiltzeko ahaleginean, eta baita interesgarriena ere egilearen beraren edo haren laguntzaileen sorkuntza izanik. 71 hitz dira (hurrenkera alfabetikoan aurreko bildumatxoetan legez). Izenak eta aditz izenak dira gehienbat, forma determinatuan sarrienik; badira, alabaina, zenbait adjektibo eta adberbio eta are atzizki bat (*-er*, dat. pl.ekoa). Inoiz ordain bakarra baino gehiago dute, gramatikazko edo itzulpenari buruzko oharrak barne.

### 4.3. Ibarguen-Cachopin kronikako zerrendak eta onomastika

Ibarguen-Cachopin Kronikak —partez gainerako lekukotasunen bitartez ezezagun zirenez hainbat eresi eta baladaz landa (ik. § 2.2. Eranskina)— biltzen du orobat beste hiztegitxo bikoitz bat (lehenago *ConTAV* § 5.2.2n argitaratua), toki-izen, etnonimo, eta pertsonalitate euskaldunen etimologiak, nahiz baden beste franko Espainiako toki-izenena eta baita zenbait siziliar, afrikar eta asiarrena ere.

---

161. Vulcaniusek, bestalde, interes berezia izan zuen «kantabriarren hizkuntza» beste edozein bezala idatziz eman zitekeela hizkuntzalariei erakusteko.

Bertan, garaiko etimologiagintzaren ohiturak ikusteaz gain, euskararen hainbat hitz eta forma gramatikalez lekukotasun interesgarriak eriden ahal ditugu (honelako gehiago da hainbat garaikidetan: Garibai, Poza, etab.):

> *Zarate* 'tú será'. Bestela mendebalean lekukotu gabea (cf. *axa(te) RS*en).
> *Bengo Olea* 'la herrería más vajera'.
> *Beraza* 'aquel mismo era': kasu *-n* faltari *RS*eko hainbat kasutan alegez.
> *Çarauz*: 'sois baçias'. Kasu amaierako txistukariari.
> *Ganboa* 'Baya arriba', hots *boa* 'bihoa', *joan*-en inperatiboa ezagun zuen.
> *Orobio* 'todos los dos…', *oro RS*en ere bada.
> *Çedala, Sedala* 'no sea', *ze-* inperatibo eta subjuntiboetako ezeztapena (Pozak ere badakar). Cf. *Çarauz* txistukariarentzat.

Badira halaber zortzi errefrau eta ia 30 esaldi ere.

Hiztegia Kronikaren Madrilgo BNko kuaderno batean da eta XVI. mendearen bigarren zatiko —1605 baino lehenagokoa bai, bederen— hiztegitxo handienetarik da, nahiz hurrengo atalean aztertu Landucciren *Bocabularioa* urrun gelditu. Bi zati ditu: lehendabizikoan alor semantikoka antolaturik eta gaztelera-euskara ordenan 110 bat hitz dira eta bigarrenean hitz horiexek zerbait emendaturik (150 bat guztira), ordena semialfabetikoan (soilik lehen letra kontuan hartuaz, oro har) eta euskara-gaztelera egiturarekin.

Sarasolak (1983: 172) hiztegitxo hauek G dialektoarekin lotzen du, zalantza gutxirekin, —eta baliteke horrela izatea— baina haren iruzkinak frogatzen duena benetan zera da, ez dela Btzat hartu behar (cf. Lakarra 1993: 21); alabaina, ez da bazterturik gelditzen Arabakoa izatea, Kronikako testurik garrantzitsuenetako bat —«Errodrigo Zaratekoren Kantua»— bezala. Izan ere, Sarasolak ikusten duenez (1983: 171) garai horretarako Gn ez genuke itxarongo hor den hainbat txistukari-nahasketa: «vestidos *conñecoac*», «espada, *espata*», «candil *criçelua*», «fuego *çua*», «polvo *auça*», «carbón *ycasa*», etab., eta ez dirudi, ordea, hori An arazo handia litzatekeenik. Azkenik, markagarri da pluraleko marka bezala sarritan ageri den < -h > grafia (*guidallac* 'piernas' baina *galzah* 'calzones', *galcerdiah* 'medias', etab.); Sarasolak azaldu bezala, egileak ez benetako herskari bat baizik eta isurkaria entzuten zuela adieraz bide lezake.

### 4.4. Hiztegigintza: II. Landucciren hiztegia

Landucciren *Bocabularioa ezqueraz jaquiteco eta ezqueraz verba eguiteco* hiztegiaren pareko lekukotasun gutxi da euskararen historian. Mitxelenak aztertu zuenetik (1958) eta Lazarragaren eskuizkribua agertu bitartean (2004) euskalki desagertu baten

—Arabako euskararen— informazio-iturri izan da eta Hegoaldeko euskalkien arteko erlazio historikoak eta haien bilakaera beste era batera ulertzeko bideak zabaldu ditu (ik. Lakarra 1986b, 2014). 1745eko hiztegian Larramendik «euskalgaiztotzat» eta «ez erdaldun hobetzat» jo zuen hiztegi hau. Ezinbesteko zen harentzat epai gogor hori, Mayansi —eskura zuen lekukotasun erabilterraz horretaz baliatuaz— euskararen ustelketa (= mailegaketa) eta gaztelaniarekiko morrontza aldarrikatzea otu baizitzaion, andoaindarrak erakutsi nahi zituen egokitasun eta edertasunen aurrean.

Andoaindarra maltzurra zen baina ez inozo, Mitxelenak inoiz erakutsi bezala: Arabako euskara «Bizkaikoaren antzekoa, ez berdin-berdina» edo «gainerakoetarik bereizia» zela zeritzon eta hizkera interesgaria horren lekukotasun haboro ez izanik, bere Hiztegian —gorputzean zein Eranskinean— hortik hartu dozenaka hitz kokatu zituen. Hitzon jatorria ezkutuan utzi zuen, baina honetan ez zen ezer berezirik, euskaldunen kontzientziaren eta bildu berben erabileraren onerako horrela egin baitzuen ororekin, ahozko nahiz idatzizko, baita Axular eta Leizarraga maiteekin ere (cf. Mitxelena 1970a, Lakarra 1991, Urgell 2000).

Hiztegiak berak ez zuen arreta handirik erdietsi (ez, behintzat, Azkue eta Urkixorena) eta *HH*aren Eranskinaren zordunen bitartez oihartzun soila euskal testu eta hiztegietan 1958 arte, zorte hobeagorik merezi bazuen ere datu, data eta jatorriagatik; urte horretan Agud eta Mitxelenak argitaratu zuten lehenengoz, 2.ren ikerketa-hitzaurre bikainarekin.

*Bocabularioa* Nebrijarenaren bigarren edizioaren moldaketa dugu. Hiru esku dira euskarazko ordainetan: A, gehien —ia %95 B. Urgellek (2002) zehaztu duenez—, B baino mendebalagokoa eta «kutxatuagoa» [*estrellea, musloa, nauioa…*]; Ck, azkenik gutxi idatzi zuen eta funtsean Aren hizkera bera bide du. Hiztegiak 328 folio dituen arren 315v-ko «sastre *dendaria*»tik aurrera ez zaie euskal ordainik gehitu gaztelaniazko sarrerei; salbuespen bakarra (halabeharrez ?) *vergüença* familia da, haren barnean den «vergüenças de mujer *alua*» ere beterik delarik, dirudienez hiztegi osoan oso lan urria egindako B eskuak betea, gainera. Folioko 62-62 sarrera direlarik 20.000 bat hitz lirateke Landucciren hiztegi honetan bilduak.

Mitxelenak argiro erakutsi zuen hiztegiko hizkera nagusia ez zetorrela bat Bonaparteren sailkapeneko dialekto bakar batekin ere eta bertan ageri diren ondare zaharreko arkaismo (*eun, isçego*), eta hitz markagarri (*eguauna* 'jueves', *achitamachia, arraunça, carranquea…*) zenbaiten hedadurarengatik nahiz mailegu askoren jatorriagatik (*eroasantea* 'hinojo, yerua', *çapoa* 'escarabajo', *verrojua* 'pestilo') bilduma horrek 1860 aldera euskarak galduak zituen hegoaldeko lurraldeetarik, hots, Arabako lurretatik jalgia genuen.[162] Bertan den hiritar lexikoaren tamainagatik —*amauia, tenientea,*

162. Gero Laz-ren eskuizkribuak are garbiago egingo zuen Mitxelenaren ondorioa.

*merioa, fiela, orri verdea, florin gorria, abilesan plaçea, croçea episticoana*…— eta baita zehaztasun esanguratsu batzuengatik —*çamarguinân calea* ‘pellegería’, *çapatari calea* ‘çapatería’— *gremio*ka antolaturiko hiri baten isla, Gasteizkoa bertakoa. Mitxelenaren analisiak nabarmen egin zuen ezin jarrai zitekeela 1860 ingururako diseinatu mapari betiereko balioa emanaz eta ez zela egoki data hori baino lehen galdutako lurraldeak euren iparrekoei mekanikoki atxikitzea. Landucciren A eskua *RS*, Mikoleta eta Kapanagarekin[163] erkatuaz garbi asko ikusten da hau: *-ain* / *-uin* (*gañean, muñ*) gordetzen du Bko *-an* / *-un*-en aurka, *alfiniquea, demunioa*… atzeranzko bokal ixtea ere badu (Bk ez bezala) eta baita hainbat ezberdintasun hitz barneko (*aldarea*) zein, bereziki, hasierako kontsonantismoan: *barea, barcatu, becatua, becataria, vagussoa, pisça, quilçea, corrincoa, beaça, çurincoa, craua* ‘grano’, *seguian guya* ‘cuna de niño’, *galamua, gatea*, etab.[164]

Hiztegian islatu morfologia urria aski da iparralderagokoekiko eten garbia antzemateko: *ar-* 3. graduko erakuslean (*arc, artan*), ez *a-*; *çerbere, norbere, noxbere* indefinituak eta *-bait norbayt, norbayçu* eta *çerbayt*en. Izen-morfologian soziat. *-kin* (mugagabe, sing. nahiz pl.ean) —baita baita —*az* soziat. nahiz intrumentalean (Zuazo)eta baita *-re(a)n* ablat.n, baina azken hau ez da Bizkaia eta Arabako euskararen berrikuntza esklusiboa, GZean ere horren arrastoak baitira.

Ezinbestean, aditz gutxi da, baina oso esanguratsuak:[165] *bearr eun* ‘menester’, *miracuru eun* ‘marauillarse’, *vayquetan dut* ‘empeño’, *arguiquetandu eguna* ‘aclarar el dia’, *ydoro deuena, andra ydoro deuena* ‘inuentor, inuentora’, *ussay eguitê deben gauçea* ‘oledora cosa’, *jaquingo duçu* ‘conuiene a saber’, *azeytunac daodê lecua* ‘oliuar lugar’. Sintaxi apurretan objektu pl.arekiko komunztadura falta: *mota daucana* ‘manchado’ vs *miembro andiac daucana* ‘membrudo’, *surr onac daucana* ‘oledor’; honelakoak gero Laz, Gamiz eta Albeizen testuetan ugari dira baina Gn ez dira agertzen 1740 arte (Zegamako dotrina) eta Bz are geroago —Barrutia alde batera utziz— eta gero ere beren hegoaldeko ertz batzuetan (cf. Lakarra 1986b, 2014 eta 2. kap., § 5).

Urgellek (2008c, 2015c) gazt-eusk hiztegia eskuizkribuko gazt.-it., gazt.-fr. eta Nebrixaren *Vocabulario Romance Latino*-ekin erkatuz eta bertako hutsak (bateratzaileak eta gainerakoak) aztertuaz, erakutsi du gazt.-eusk. besteak baino laburrago dela, sarrera kopuru zein azalpenetan eta gazt-it dela —ez VRL— enparatuen iturria. Hots, hiztegi

163. Antzekotasun asko ditu xviii. mende akabuko eta xix. mende hasierako Oñatiko eskuizkribuetako hizkerarekin (ik. Mitxelena 1958).

164. Aldiz, ez du bokal sudurkaririk duenik Mitxelenaren ustez; baina hau hobeki aztertzeko puntua izan liteke bai Landucci eta baita Laz-rengan (cf. § 3.2.1.3).

165. Haren teknika lexikografikoak egokiegi ez zirelako (zorionez!), hainbat izen edo adjektibo aditz jokatuen bitartez eman zituen; baita itxaron zitekeen baino deklinabide-marka gehiago eta beste zenbait xehetasun hiztegi estandar batean itxaron-ezin bezain eder hizkuntza historialariarentzat.

hauetan Nebrixarenak ez diren hainbat sarrera dira, nomenklaturak gazt-it > gazt-fr > gazt-eusk hurrenkeran bata bestetik kopiatuz osatuaz.

Erlazio eta huts metaketa honetatik datoz gazt-eusk hiztegiaren arazo edo ezaugarri batzuk: erdal sarrera akastunez, zehazgabeez eta ulergaitzez bete xamar da eta gertakari honek euskal berriemaileen lana biziki zailtzen du. Tarteka ordainik eman ezinik ziren, baina maizenik nahiago zuten erantzunen bat ezarri, nola edo hala, eta jokabide honek hainbat ordain zehazgabe, kalko eta mailegu gordin sorrarazi zituen, tartean zenbait iratxo (sarrera akastunak), euskaraz bere hartan kopiatu edo kalkatzetik sortuak.

Gero eta ziurrago da Landucciren gazt-eusk hiztegiko mailegu gordin batzuk (agian asko) ez direla orduko euskaratik jalgiak, ez eta Arabako euskara erromantzatuagotik ere, nolabaiteko ordainak edo ordaintzakoak baizik, gaztelaniazko nomenklaturari erantzun beharrez berriemaileek noraezean onartuak apika, haien forma nahiz adierazko ziurtasunik gabe.

Urgellen lanok gogoratzen dute hiztegi bat ezin uler ez argitara litekeela egokiro haren eredu lexikografikoak (hurbilekoak eta urrutiagokoak) gogoan izan gabe.[166] Filologia zehatza da testuen ulerpen ziurrean aurrera egiteko tresnarik sendoena. Iturri baten alderdi guztiak xehe-xehe ezagutzea ezinbesteko da haren datuak hizkuntzaren historiarako (edo bestetarako) berme gisa erabiltzeko. Behar hori areagotu egiten da corpus historikoetan zeharkako iturri diren hiztegietan: haien lekukotasunak balio erraldoia hartzen du iturri zuzenak urri diren garai eta lurraldeetan. Alabaina, hori bezain ezagun da hiztegigileek edonon eta edonoiz beren eredu eta iturriekiko izan ohi duten morrontza eta hortik letozkeen arazoak (cf. Mitxelena 1970a, Lakarra 1993, Urgell 2002d).

## 5. ONDORIO OROKORRAK

**5.1.** Aurreko orrialdeotan aski garbi gelditu ahal da Euskara Arkaikoak hizkuntzaren historia argitzeko duen ahala eta egitekoa eta eman diezaigukeen laguntza. Esan gabe doa, hori xurgatzeko orain arte egin diren baino ikerketa gehiago eta sakonagoak beharko

---

166. Bere lanean ematen dituen adibide ugariren artean ondoko parea aipatzen dugu: eusk *delfinoa* ez da inongo euskalkitakoa (are gutxiago arabar Lautadakoa!) baizik eta Land-ren ama-hizkuntzan «sortu», —«delfin o golfin» (VRL) > «delfino golfin» (gazt-it)— eta hortik «delfino» gisa gazt-fran eta gazt-eusk-ra igaro okerra. Bestalde, Mitxelenak (1958: 46-7) Land-ren hiztegiak erraztasunez jasotzen duen hiriko lexikoaren adibideen artean bildu gazt *hojaldrea* : eusk *orri verdea*; alabaina, A eskuak < *hoja bedre* > [hojaldrea] irakurri zuen (eta *berde* ulertu), < *ld* > zatia aski lardaskatua baita eskuizkribuan.

direla burutu; zorionez, azken urteotan egindakoen kopuru eta kalitateak ere gora egin du eta badira beste batzuk abian. Horrenbestez, itxaropentsu izan bide gaitezke alorraren hainbat alderditan izan litezkeen aurrerapenez.

**5.2.** Honako saio honek badu, hala guk uste, zenbait berrikuntza eta aitzinamendu. Alabaina, menturaz Euskara arkaikoaren garaiaren mugen berrespena bide litzateke ondorio gisa aipatzeko lehena: aurrekotik funtsean lekukotasunen izaeragatik (sekundarioak / primarioak) bereizten zelarik (cf. Lakarra 1997a), euskal filologoak gai izan dira 1600 aurreko eta ondoko lekukotasun gehienak banatzeko —are EArk beraren barruko azpiatal ezberdinetakoak ere—[167] hizkuntza ezaugarrien bidez, batez ere, baina ez soilik, Lafon, Mitxelenak eta Mounolek ikertu aditz sistemako zenbait zertzeladaren bitartez.

**5.3.** Periodizazioa eta kronologia finago egin dira, hasierako muga 1400era eramanaz. Hortik eta 1545era den mende eta erdia dagoeneko ez da lehen bezala ia erabateko ilunpean, —mendebalari dagokionez, bederen—, artean gertatu aldaketa zenbait identifikatu eta kokatu direlarik, hurrenkera erlatiboan baino ez bada ere:

1. *Egin* laguntzailearen gramatikalizazioa,
2. *-i/-ø* neutralizazioa aditz irrealetan,
3. *-tu/-ø* neutralizazioa aditz irrealetan, etab.

Ez da zer esan asko falta dela eta, zorigaitzez, garaiaren hedaduraren hiru laurden hauetan (1400-1545) corpusaren %2 edo baino ez izanak ez duela nahi eta behar genukeen laguntza eskeintzen.

**5.4.** Filologiaren garapenak lekukotasunak hobeki pisatzera eta trenkatzera garamatza: argitalpen edo izkiriatze data eta lehen ekoizpenarena bereizteak —100, 125 edo, inoiz, 150 urte bereizi ere, gainera— aldaketa larriak dakartza testuen hurrenkeran (ia ispilu-irudia «Etxepare – Leizarraga – Lazarraga – Baladak – Errefrauak» → «Baladak – Errefrauak –Etxepare – Leizarraga – Lazarraga», eta ulergarriago eta argiago egiten du

167. Aditzeko beren arkaismoarengatik salbuespen dira hurrengo garaian Egiaren kantua edo Mikoleta (hau, aldiz, beste edozein baino aitzinatuago txistukarien neutralizazioari so egiten badiogu); usuenik hurrengo garaian tratatu ohi diren baina ahozko tradiziotik jasoak diren Isasti, Zalgize, Bela eta Oihenarten errefrau bildumak eta eresi eta balada zaharrak Euskara Arkaikoaren lekukotasuntzat jo ditugu lehen (§ 2) esan legez.

hizkuntzak pairatu fenomenoen azterketa, bai sintaxian eta aditz morfologian (Mounole 2011a), baina baita eratorpenean eta lexikoan ere (cf. Blanco 2014, 2015).

**5.5.** Etenak —arkaismo zenbaiten galera, hainbat berrikuntzaren sorrera—, ez dira gertatzen soilik Erdiaroko Euskara eta Euskara Arkaikoarenean[168] edota honen eta Euskara Zahar-Klasikoaren artean, baina baita Arkaikoaren barrenean ere.

Erdiarotik datorren eta Euskara Arkaikoan agortuko den arkaismoa dugu hasperena Hegoaldean GNko zenbait eremutan salbu (cf. Manterola 2015), XVIII edo XIX. mendeetan (baina ez lehenago) hasiera belareduneko erakusleekin aurkituko ditugun Err, Zar, Aez eta GNren zati batzuetan, alegia. 1. eta 2. graduko artikulua, aldiz, ezaugarri zahar baina oso bizia dugu oraindik. Hainbat aditz zaharren joko sintetikoa gordetzen da garai honetan, baina asko urrituko da Euskara Zahar eta Klasikoa (EZK), batez ere ekialdean. [169]

Mende asko lehenagoko berrikuntza —EBZ hautsi aurreko edo— ziren bokal sudurkariak, garai honetan bazterreko euskalkietara mugatuak ziren eta EZKn mendebal (ia) osorik desagertuko mendebalean. Aoristoa (Mikoleta edo salbu), *albait* preskriptiboak eta bestek ez du EZKn jarraitzen; fosilizaturik, aldiz, bai subjuntibo trinkoak, bai 1. eta 2. graduko artikuluak eta mendebaleko ablatibo zaharrak (edo honen eta prosekutiboaren arteko bereizkuntzak) nahiz mugagabearen erabilerak. Osasuntsuago da oraindik Euskara Arkaikoan ia hutsik ez zuen Aresti-Linschman legea. Ondotik desagertuko da mendebalean (Barrutiaren salbuespenarekin) **ezan* laguntzailearen erabilera; Euskara Arkaikoan hasieratik amaierara oso gutxitua kausitu dugu Bz. Bidenabar, ez da ahanztekoa —G ipar-ekialdeko salbuespen gutxi batzuk baino ez direlarik— laguntzaile horrek A, B, nahiz Gn soilik bi aktantetako (nork-zer) formak dituela, ez *egin*-ek hartzen dituen hiru aktantetakoak; gertakari honek baduke bere garrantzia hiru dialekto horiek ezaugarri arkaiko hain bitxiaz lotzen dituelarik eta are gehiago ohartzen garenean GNz ere antzeko egoera bat dugula: hemen **erazan*-ek hartzen du beste hiruretako *egin*-en tokia (hiru aktantetakoak) eta berriro **ezan* aurkitzen dugu bi aktantentakoetara mugatua (ik. 2. kap., § 5).

Ohiturazko partizipio + *joan/eroan(eraman)* egitura Bn berandu arte (XIX. m.) gorde arren, galdu egin zen ekialdean (Etxeparek eta Leizarragak badute aleren bat, Oihenarten errefrauek hainbat) eta antzera Otxoa Arinek eta Peñafloridak lekukotu geroaldiko

---

168. Oso zaila da jakiten zer datorren goragotik (Erdiarotik) eta zer sortzen Arkaikoan aurreko garaiko eta are EArken lehen 3/4etako testu falta (cf. § 5.2) kontuan izanik.

169. 2. kap.-an (§ 4.4.6) azaldu bezala, testuan esandakoak ez digu esku ematen inguruko hizkuntzetan bezalako forma sintetiko orokorra berreraikitzera historiaurrerako.

agintera eta *zu*ren pluraleko komunztadura ere. EArken garai honetan mendebaleko euskaraz urri dira TOGen egiturak eta are urriago egingo dira handik hona. Soziatibozko Koordinazioaren zenbait aztarna badia (batez ere Hegoaldean) eta ia erabat desagertzen da hurrengo garaietan —«Xekin Y = X eta Y» egituran, bederen, ez horrenbeste «X Y-rekin = X eta Y», *arte*ren inguruko fosil batzuk landa XIXko Gn. Konparazio genitiboko *RS*eko hapaxa berriro agertzen da, ugari erronkariera modernoan bederen.

**Edutsi* berria ia bakarra da Bn EArkaikoan baina An bai hori, bai *-i-* eta are **eradutsi* aurkitzen dira eta EArk honetan eta hurrengo garaian ere oraindik Gn *-i-* singularrean eta *-irauz* pluralean. Berrikuntza haboro bada EArkaikoan: kontrakzioak aditzean, partizipioaren hedadura perifrasi irrealetan (An eta Bn baino geroago Gn), *-z* pluralekoak **edun*en…

**5.6.** Inertzia eta nahasketa oinarrizko zenbait berrikusi beharra ere bistakoago egin da: Bonaparteren dialekto-sailkapenak (edo are geroagokoenak!) betidanikotzat jotzeko ohitura hedatuegia, demagun (cf. § 2.3.1 eta § 2.3.2 Urkixo, Garibai eta *RS*ez). Lehenago horrelako jarrerak isoglosak betierekotzat jotzen zirela salatu beharra zegoen (eta horrek berarekin zekartzan akats larriak lekukotasunen tratamenduan), orain Landucci eta Lazarraga (eta beranduago Gamiz eta Albeiz) eskura izanik, horien eta Garibairen zein Barrutiaren nahiz Iturbe eta Irureren hizkeren arteko paralelismo garrantzitsu ugari aurkitzean zalantzan jartzekoa da —diakroniaren aldetik, bederen, eta hori da gure hurbilketaren ardatza—, inoiz «Vgip» edo «V-ar» zabaldurik izan ote den, ala historiaren aldetik bezala hizkuntzarenetik ere, Oñati eta iparreragoko eremuak «Ipar-A[rabera]» ditugun, lurralde eta dialekto horrekin B-rekin baino lotura zahar eta sendoagoak baitzituzten. Hots, oraindik euskara arkaikoan B, G eta A-ren adabegien gainetik litzatekeen askoz lehenagoko *Mendebaleko dialekto zaharraren oihartzunak genituzke Araban (cf. 2. kap., § 5.8) eta arestian osatzen baino ez bide zen Bn; Gren kronologia are berankorragoa da zantzu guztien arabera.

Ekialdean ere (cf. Camino 2012, 2014) baliteke hango euskara zaharraren zatiketa dagoeneko aurreratua izatea eta hura eta nafar erreinuko hizkeren arteko etena areagotuaz joatea. Nolanahi ere, 1616-17ko gutunek erakusten digute orain arte ditugun XIX-XX. mendeko datuetarik Bonaparte, Azkue eta ondokoek atera Err-ren irudia oso modernotzat jo behar dugula, eta, aldiz, 200/300 urte lehenagoko egoeran hango hizkera ingurukoetarik askozaz hurbilago zela, eta are ustezko berrikuntza «nortasun-emaileak» ere (erakusleetako belareak, *gr-, zr-* eta *zt-* taldeak aditzetan, triptongoak, silaba atonoetako bokal erorketa ia orokortuak, *du-, zu-* > *dio- zio-* bilakabideak **edun*-en…) oraindik gauzatzeke.[170]

170. Cf. Mitxelenak (1964a) Uhlenbecken B eta G-ren jatorri ezberdintasunaz eta aurreko lau

**Irakurgai osagarriak**

Altuna 1979, Arkotxa 2008, Arkotxa & Lakarra 2015, Arriolabengoa 2007, Baggioni 1997, Bilbao *et al.* 2010, Blanco 2014, Burke 2006, Lafon 1943, 1999, Lakarra 1986a-b, 1993, 1996b-c, 1997a, 2004, 2014a-b, Manterola prestatzen, Mitxelena 1954b, 1958, *TAV*, 1967, Mounole 2007, 2011a, Mugika 2002, Oihartzabal 2007, Salaberri 2010a-b, Sarasola *Contribución*, 1997, Sauvageot 1973, Ulibarri 2013, Urgell 2000, Memoria, 2014, Urquijo 1919, Zubiaur 1990.

mendeetan izan omen zuten bateraketaz egin oharrak; ik.., orobat, Lakarra (1986b) eta (1996b).

6.

# EUSKARA ZAHAR ETA KLASIKOA

Céline Mounole
Ricardo Gómez-López

## SARRERA HISTORIKOA: 1600-1745

(Xabier Zabaltza)

Ehun eta berrogeita hamar urte hauetan, areagotu egin ziren Erdi Aroaren bukaeran hasi ziren aurkikuntzak. Europako zibilizazioa eta mentalitatea beste lau kontinenteetara (Willem Janszoon holandarrak Australia «aurkitu» zuen 1606an) eta bost ozeanoetan barrena zabaldu zen. Laburbilduz (agian, sobera laburbildu ere), esan dezakegu xvii. mendea arlo askotan (ekonomian, demografian eta balio moraletan) izaniko krisiaren garaia dela, baina, horrekin batera, zientzia esperimentalarena ere bai. Herrialde askotan, ez, baina, Espainian, biek lagundu zuten Eliza Katolikoa ahultzen, Erregimen Zaharraren zutabeetako bat zena. xviii. mendean, Ilustrazioa, maiz errege-erreginek sostengaturik, espiritu anitzez jabetu zen, baina ideien ordena berriak mehatxaturik sentitzen zirenen erreakzio kontserbadorea piztu ere egin zuen.

### 1. EKONOMIA ETA DEMOGRAFIA

xvii. mendearen hasieran, Euskal Herriak 450.000 bizilagun zituen gehienez ere. Horietarik, baikorrak izanez gero, hiru laurden izanen ziren euskaldunak. Kontuan hartuz garai hartan analfabetoak bizilagunen %90 edo gehiago izaten zirela, zinez harrigarria da euskarazko literaturari eusteko masa kritiko bat egotea. Ez da halabeharrezkoa, garai honen denbora gehienean, irakurlego hori Lapurdiko kostaldean aurkitzea, non sortzen ari zen burgesia euskaldun bat bizi baitzen. Baina, Euskal Herriko «klase nazional» gisa funtzionatu ahal izanen zuena maldan behera zihoan 1789ko Iraultza baino askoz lehenagotik.

Ekonomiak Erdi Aro Beherean Euskal Herriari nolabaiteko ongizatea ekarri zioten sektoreetan oinarriturik dirau, hots, nekazaritzan, abeltzaintzan, arrantzan, oletan, ontzigintzan eta merkataritzan, baina, bistan denez, ez da aski bizilagun anitz Euskal Herrian mantentzeko. Garai honetan guztian, Euskal Herria gizon eta emakume fabrika bat izan zen. Euskal herritarrek Espainia-Frantzietako beste herri batzuetara eta, nola ez, Ameriketara emigratu zuten tropelka.

## 2. POLITIKA

Gaztelak Nafarroa konkistatu (1512), anexionatu (1515) eta zatitu (1527) ondoren, Bortuez Haindiko Lurraldeak (gaur egungo Baxenabarre) independente gelditu ziren. 1589an, errege Henrike III.ak, katolizismora konbertituriko higanot ohiak, Pariseko tronua eskuratu zuen, Henrike IV.a izenarekin. Hori horrela, azken euskal herrialde subiranoaren zortea betikoz Frantziarenari loturik gelditu zen. 1620an, Luis XIII.ak bi koroen arteko behin betiko batasuna zigilatu zuen. 1659ko Pirinioetako Hitzarmenaren arabera, Frantziaren eta Espainiaren arteko mugak ezarri ziren, gaur arte oso gutxi aldatu direnak. Mende erdi baino gehiagoz gainbeheran egon eta gero, Espainia ezin zitekeen Europako potentzia kontinental handia izan, iparraldeko auzoak ostu baitzion titulu hori. Hizpide dugun mende eta erdi honetan, bakarrik sei gerra izan ziren Frantziaren eta Espainiaren artean, aurreko ehun urteetan bederatzi gerra izan baziren ere.

## 3. ERAKUNDEAK

Gerra batek hain zuzen ere baldintzatu zuen Hego Euskal Herriko berezitasun instituzionala. Espainiako Ondorengotza Gerraz ari gara (1704-1715). Karlos II.a azken Habsburgtarra hiltzean, Hegoaldeko lau euskal herrialdeek Bourbon dinastiako geroko Filipe V.aren, irabazle gertatu zenaren, alde jo zuten. Aitzitik, aragoitarrek eta katalanek, galdu zuenaren, Habsburg dinastiako Karlos «III.a»-ren, alde egin zuten borroka. Bere hautagaitzari aurka egiteagatik zigor gisa, Filipe V.ak, Baxenabarreko Henrike III.aren zuzeneko ondorengoak, Aragoiko, Kataluniako, Valentziako eta Mallorkako erakundeak ezeztatu zituen. Karlos artxidukeak irabazi izan balu, Hego Euskal Herriko erakundeak ezeztatuko zituen eta bereizgarritasun instituzionalak Aragoiko Koroan iraunen zuen. Kasualitate baten ondorioz, beraz, Nafarroako Erresuma, Bizkaiko Jaurerria, Arabako Konderria eta Gipuzkoako Probintzia 1716tik aurrera autonomiari eutsi zioten lurralde bakarrak izan ziren Espainiako Monarkian. Orduz geroztik, 1876ko foru «ezeztatzea» arte, Hego Euskal Herrian nortasun berezi bat hedatuz joan zen, gehiago foruetan

oinarritua euskaran baino. Ipar Euskal Herrian, aitzitik, ezin izan zen foru nortasunik gauzatu, Baxenabarreko Erresumako eta Lapurdiko eta Zuberoako bizkonderrietako erakundeak 1789an ezeztatu baitzituzten, Frantziako Monarkiako gainerako probintzia guztietako (Bretainiako, Languedoceko, Korsikako, Proventzako eta abarretako) erakundeekin batera eta, beraz, euskal nortasuna bakarrik hizkuntzan oinarritu ahal izan zen. Hori dela-eta, Bidasoaz iparraldean euskal berezitasunaren defentsa bereziki linguistikoa izan da beti eta Bidasoaz hegoaldean bereziki politikoa. Maiz aipatzen ez bada ere, ez da alferrik oroitaraztea 1716ko *Nueva Planta*-tik 1789ko Iraultzara, Espainia estatu zentralizatuago bat izan zela Frantzia baino.

Ondorengotza Gerra 1713ko Utrecht-eko Hitzarmenaren bidez eman zen bukatutzat. Horren arabera, Espainiako Monarkiak Europan zeuzkan lurralde guztiak galdu zituen. Horrela, eremu trinko bat bihurtu zen. Jover-ek Espainiaren «penintsularizazioa» izan du hizpide. Ordura arte, Espainia enperadorego bat izan zen. Orduz geroztik, nazio bihurtzeko bidea urratu zuen, momentu batzuetan, antza, huts egin zuena.

Euskal Herriaren antolatze prozesua Espainiaren eta Frantziaren antolatze prozesuen garaikidea da, ez nahitaez lehiakidea. Gaztelari bateratsu (1179an Bizkaia; 1200ean Araba eta Gipuzkoa) batu bazitzaizkion ere, Mendebaleko hiru probintziek ez zuten administrazio-erakunderik partekatzen. XVI. mendean, hirurek erabaki zuten Batzar bakar bat osatzea, egoitza Gasteizen izanen zuena, baina, tamalez, horren aktarik ez daukagu. XVII. mendean, Bizkaiaren eta Arabaren arteko eta Gipuzkoaren eta Arabaren arteko hitzarmenak ugaldu egin ziren. Bizkaiko burdinari buruzko 1644ko otsailaren 2ko Errege Dekretuak hiru probintzietako foruen batasuna aitortu zuen. Epai horretatik Nafarroako foruak baztertu ziren, herrialde horrek erresuma maila baitzuen. XVII. mendearen bukaeraz geroztik, *Provincias Vascongadas* esaera dokumentatzen da gaztelaniaz Mendebaleko hiru herrialdeak izendatzeko. Hurrengo kapituluan ikusiko den bezala, Pirinio Behereetako Departamendua sortzean (1790) Frantziako euskaldun guztiak administrazio-batasun bakar batean geldituko dira, hori bai, bearnesekin batera.

## 4. KULTURA ETA IDEOLOGIA

Garai horretako historialari eta idazleengan ere aurkitzen dugu probintziaz gaindiko euskal nortasunaren ernamuina. José Moret kronistak gaztelaniaz idatzi zuen eta haren interesa Nafarroako Erresumara mugatu zen, baina Allande Oihenart zuberotarrarena, obra historiografikoa latinez idatzi zuenarena, askoz zabalagoa da, gaur egungo Euskal Herriko zazpi herrialdeez ez ezik, Gaskoiniaz, Gaztelaz eta Aragoiz ere aritu baitzen, herrialde horien sorreran euskaldunen partaidetza erabakigarria izan zen eta. Haren

garaian sapa handia zuen eusko-kantabrismoaren kontra, Oihenartek Antzinateko baskoiak jo zituen gaur egungo euskaldunen aitzindaritzat, baina XVII. eta XVIII. mendeetan «Kantabria» izena erabiltzen segitu zen, gaur egungo Euskadiko Autonomia Erkidegoko hiru probintziak izendatzeko gehienetan, baina batzuetan Nafarroa eta Ipar Euskal Herria ere bai. Pedro Axular nafarrak, euskaraz idatzi zuenak, *euscal herri*-ko zazpi herrialdeak aipatu ditu lehenbizikoz, baina esaera misteriotsu bat gehituz: «eta bertce anhitz leccutan». Beharbada, euskaldunen historia oso diferentea izanen zen Axularrek, 1643an, zehaztu izan balu zer «bertze anhitz lekuk» osatzen zuten Euskal Herria.

Esan ohi da foru erakundeek euskarari eusten lagundu zutela, modu pasibo batean, behintzat. Hori ukatu gabe, ñabardura bat gehitu behar da. Izan ere, salbuespenak salbuespen (ia denak berantiarrak), Nafarroako Gorteek, Baxenabarreko Estatuek, Arabako, Bizkaiko eta Gipuzkoako Batzar Nagusiek, Zuberoako Orda Korteak eta Lapurdiko Biltzarrak utzikeria nabarmena erakutsi zuten euskararen zortearekiko eta maiz debekatu zieten euskaldun hutsei bertan parte hartzea, garai hartan bizilagunen gehienak zirenei. Anakronismo bat izanen litzateke euskararen apologistak, Aro Modernoan ugaldu zirenak, euskaldunen eskubide linguistikoen defendatzailetzat jotzea. Aitzitik, egile horiek Euskal Herriko berezitasun instituzionala zilegiztatu nahi zuten Madrilen aurrean (askoz gutxiagotan, Parisen aurrean), berezitasun horren onuradun nagusia zen klasea zurituz, agintaritza politikotik euskaldun jendea baztertzen zuen bera, hain zuzen ere. Haientzat, euskara ez zen komunikatzeko tresna bat, bereizgarri bat baizik. Horregatik, ia apologista guztiek gaztelaniaz (edo frantsesez) idatzi zuten.

Euskal Herriko erakundeak babesteko modu bat euskara Espainia osoan hitz egina zelako ideia bultzatzea zen eta, beraz, euskaldunak espainolik garbienak zirelakoa. *Avant la lettre* eusko-iberismo hori funtsezko osagai ideologiko bat da. Larramendiren hiztegia (1745), kapitulu hau ixten duena, adibide ezinago argia da. Jesuita andoaindarraren asmoa hauxe zen: euskara jatorrizko hizkuntza dela frogatzea eta, beraz, gaztelaniazko hitz asko euskaratik, Espainietako lehen hizkuntzatik, datozela. Horretarako, gehiegikeria etimologikoetara joko du behin eta berriro eta hitz berri asko asmatu zituen, gero, senak iradokirik, euskaraz idaztean erabili ez ohi zituenak (Jüsef Egiategi zuberotarrak, aldiz, seriotan hartu zituen gipuzkoarraren proposamen linguistikoak eta horregatik haren obra ia-ia ulertezina da). Larramendik hasi zuen tradizio garbizaleak bide egin zuen eta gaur egun arte iraun du. Herder-ek eta Humboldt-ek haren obra ezagutu zuten. Haiexek ezagutaraziko dituzte Euskal Herria eta euskara Alemanian. Garai erromantikoan, egile alemanek ospe zientifikoa eman zieten Larramendiren, Astarloaren eta beste egile euskaldun batzuen burutazioei. Hemengo egileak hangoez baliatuko dira beren teoriak «egiaztatzeko». Horrela, biribil ero bat sortu zen. Ahoberokeria galant horien ondorioek gaur arte iraun dute.

## 5. EUSKARAREN EGOERA

Garai honetan, euskarak bere mugen barruan dirau, salbu eta Araban eta, neurri txikiago batean, Nafarroan, non azkartu egin baitzen hiztunak eta eremua galtzeko prozesua. «Diglosia» hitzak ezin hobeki deskribatzen du euskararen egoera, beti gaztelaniaren, frantsesaren eta gaskoiaren beraren menpe, hizkuntza horietantxe idatzi baitziren Euskal Herriko foruak. Jendaurreko ekitaldietatik bazterturik badago ere, euskarak segitzen du bizilagun askoren hizkuntza bakarra izaten eta badu prestigioa, baita klaserik aberatsenen artean ere. Esan liteke Erregimen Zaharreko estamentu-egiturak on egiten ziola euskararen iraupenari, nahiz eta bigarren mailako hizkuntza gisa. Mentalitate burgesaren berdintasunezko diskurtsoa agertzean, erdara/euskara bereizketak zentzua galdu zuen toki askotan eta horrek eragina izan zuen hizkuntzaren galeran.

XVI. eta XVII. mendeetan, euskararen historiako gertaera bitxi bat izan zen. Kanadako ekialdeko itsasaldean eta Islandian euskaran oinarrituriko *pidgin* bana (hizkuntza nahasiak) sortu ziren, jatorri ezberdinetako arrantzale eta marinelen arteko komunikaziorako balio izan zutenak. Euskararen lanketa literarioari dagokionez, Eliza Katolikoari oso loturik iraun zuen. 1545etik 1879ra 101 liburu argitaratu ziren euskaraz, horietarik 89 helburu erlijiosoa zutenak eta 4 bakarrik, Sarasolaren kontuen arabera, jotzen ahal dira literariotzat. XIX. mendearen bukaera arte ez da literatura laiko bat sortuko, Ipar Euskal Herriko mugimendu kulturalistak edo bultzaturik (hein batean kleroaren eraginaren pean zegoenak), Hego Euskal Herriko mugimendu foruzaleak beste lehentasun batzuk baitzituen.

# EUSKARA ZAHAR ETA KLASIKOA[1]

Céline Mounole,
Ricardo Gómez-López

## 1. EUSKARAREN MUGAK ETA EGOERA 1600-1745

### 1.1. Euskararen mugak

xvi eta xviii. mendeen artean, euskararen mugak gutxi aldatu bide ziren. Garibaik (1571) ekarri datuen arabera, xvi. mendean euskara Gipuzkoa, Araba eta Bizkaian, baita Nafarroaren zati handi batean ere mintzatua zen —bereziki Iruñea inguruan[2]—. Lizarran eta Tafallan kokatzen zen euskararen Nafarroa hegoaldeko muga; bestela erranik, xviii. mendera arte Tafallatik gorako[3] herri nafarrak euskaldunak ziren. Hizkuntza-egoera horren berri ematen digute Nafarroan auziak itzultzaileekin burutu zirela adierazten duten xvii. mendeko hainbat auzi-agirik (Cid 2002: 16). Gisa berean, Lekuonak aurkitu zuen 1587ko Iruñeko elizbarrutiko herrien zerrendaren arabera, urte hartan, herri hauen % 90 euskalduna zen; zehazkiago, 536tatik 453 (Lekuona 1933).

Euskara Arabako herri gehienetan ere bizirik zatekeen xviii. mendean, Gasteiz inguruko herriak eta lautada barne, Barandiaran (1926) eta Caro Barojaren ustez (1945). Sarasolaren iritziz (1976: 13), berriz, euskarak garai hartan galdu zukeen lautada. Geroztik Uribarrena & Gonzalez de Viñasprek (2008) ikergai dugun garaian Gasteiz inguruko Luku, Betoñu, eta Elosun (Gasteiz iparraldea) eta Mendoza, Tresponde eta Langraiz Okan (Gasteiz mendebaldea) euskara mintzatua zela erakusten duten dokumentu batzuk ekarri dituzte. Gasteizi dagokionez, Caro Barojak ekarri dokumentuaren arabera, xvi. menderako Arabako hiri nagusiko biztanleek gaztelania erabiltzen zuten, nahiz eta

1. Kapitulu honen idazketa 2016ko maiatzean bururatu zen. Egileek ikerketa proiektu eta talde hauen laguntza izan dute: «Monumenta Linguae Vasconum (IV): textos arcaicos vascos y euskera antiguo» (Espainiako MINECO, FFI2012-37696), «Historia de la lengua vasca y lingüística histórico-comparada» (HLMV-LHC) (Eusko Jaurlaritza, GIC. IT698-13) eta «Hizkuntzalaritza Teorikoa eta Diakronikoa: Gramatika Unibertsala, Hizkuntza Indoeuroparrak eta Euskara» (HiTeDi) (UPV/EHU, UFI11/14).

2. «En las prouincias de Guipuzcoa, Alaua, Bizcaya, y en grande parte del reyno de Nauarra, y en particular en todo el distrito de la merindad de Pamplona […]» (Garibai 1571, *apud* Cid 2002: 26).

3. Tafalla eremu euskaldun horren barne zen ala ez, ez dago argi, eta eztabaida asko eragin duen gaia da (Riezu 1976, Oroz Arizcuren 1977).

euskara ulertu (Caro Baroja 1945: 16).[4] Arabako Errioxari dagokionez, euskara XVI eta XVII. mendeen artean erretiratu zatekeen eremu horretatik (Intxausti 1990: 70).

Bizkaia eta Gipuzkoaren egoera linguistikoaren lekukotasun zehatzik ez izanagatik, euskararen zeharkako berriak ez dira falta. Bi eskualde horietan euskara zen nagusi XVIII. mendera arte, baita Bilbo eta Donostian ere. Dudarik gabe, Mikoletak 1653an hizkuntza-eskuliburu baten idazteko ikus zezakeen premiak merkataritza-gune garrantzitsua zen Bilboren hizkuntza-egoera salatzen digu (ik. § 5.2).

XVI eta XVIII. mendeen artean, euskarak gaur egungo Ipar Euskal Herria estaltzen bide zuen. XVII. mendean Euskal Herrian gaindi ibili zen Florentziako Philippus bidaiari italiarraren lekukotasunaren arabera, Baionan ere euskara erabiltzen zen, frantsesarekin batera.[5] Ekialdeko mugaz den bezainbatean, gaur egun administratiboki Biarnoko herria den Eskiulan eta Zuberoako azkena den Montorin erabiltzen z(ir)en hizkuntz(ar)en berririk ez dugu. Halere, toponimiak erakusten digu bi herri horietan gaur egun artetsu iraun duen euskara-gaskoiera egoera elebiduna aspaldikoa dela. Honenbestez, eskura ditugun datuen arabera, Euskara Zaharraren garaian euskararen mugak hurrengo mapan islatuak zirela pentsa dezakegu.

### 1.2. Euskararen egoera

Garai honetan ere eguneroko hizkuntza izanagatik, euskarak ez zuen prestigiorik erdietsi zehaztu berri ditugun gune gehienetan. Salbuespen bakarra Lapurdi kostaldea dukegu, orduan itzaletik atera baitzen, liburu askoren hizkuntza nagusia bihurtuz (ik. 2. atala).

XVII eta XVIII. mendeetako euskararen egoera ongi ulertzeko, ondoko parametroak gogoan hartu behar dira: (i) ahozko erabilera *vs* idatzizko erabilera, biak ala biak garai hartako euskal eremuen egoera diglosikoen menpe direnak; (ii) erakunde publikoak *vs* Elizaren hizkuntza-politikak; (iii) irakaskuntza zibila *vs* irakaskuntza erlijiozkoa.

#### *1.2.1. Euskararen egoera herri erakundeetan*

Lehenik, herri erakundeetan eta justiziaren alorrean, euskarak ez zuen estatus ofizialik erdietsi. Gehienetan, traba gisa agertzen zaigu, eta traba horren gainditzeko hainbat neurri hartzen da, aldekoak zein kontrakoak.

---

4. «En Vitoria, se habla castellano, pero entienden el vascuence, y en los más de los pueblos se habla esta lengua» (Caro Baroja 1945, *apud* Cid 2002: 26).

5. «Benché in Bayona si parli universalmente linguaggio francese, tuttavolta intendono e parlano molti anche il basco» [«Nahiz eta Baionan frantsesa den nagusi, anitzek euskara ere ulertzen eta hitz egiten dute»; itzulpena gurea da] (1693, *apud* Oroz Arizcuren 1977: 319).

EUSKARAREN MUGAK EUSKARA ZAHARREAN (1600-1745)




Nafarroako Erresumak ez zuen sekula euskara hartu hizkuntza ofizialtzat. Akta ofizialak, biltzarretako txostenak, baina baita 1608 eta 1611 artean idatzi eta 1645ean argitaratu foru berria ere bearnesez idatzi ziren (Goihenetxe 1983: 252).[6] Halere, herritarren egoera linguistikoa kontuan harturik, Erregeek edo Nafarroako Estatuek

6. Horren salbuespen bakarra dugu 1756an Erregeri egin zitzaizkion donazio edo emaitzen agiriaren zati bat, euskaraz idatzi zena (Goihenetxe 1983: 252).

euskararen aldeko neurriak hartu zituzten. Arnaud Oihenartek 1639ko uztailean lortu zuen Donapaleun lehen instantzia auzitegi bat sortzea, Nafarroa Behereko biztanleen auziak euskaraz bururatu zitezen (Cierbide 1992: 20). Bestalde, 1645eko foruan bertan notario eta uxerrei eskatzen zaie euskara jakin eta erabil dezaten. Hauez gain, bikario jenerala ere euskalduna izan behar dela adierazten da 1691ko araudietan (Goihenetxe 1983: 253).

Gipuzkoa eta Bizkaiko batzarrek, berriz, gaztelaniaren erabilera bultzatu zuten aztergai dugun garaian. 1696ko Gipuzkoako Foruek adierazten dute alkate izateko gaztelaniaz idazten eta irakurtzen jakin behar dela (Alberdi & Aragón 2004). Halaber, Bizkaiko batzarrak ere ordezkari guztiek idazten eta irakurtzen jakiteaz gain, gaztelania jakin behar zutela erabaki zuen XVII. mendean zehar (Gallastegi 2004: 31).[7] Arau berria ez zen denen gustukoa izan eta 1631n herritarrak batzarretan gaztelania erabiltzearen kontra altxatu ziren (Intxausti 1990: 77, Gallastegi 2004: 31-33).[8] Halere, XVIII. mendean baizik ez zen atzera egin erabaki horretan: akten arabera, 1704an itzultzaile bat izendatu zuten batzarretan egoteko, eta mendean zehar azalpenak behin eta berriz euskaraz eman zirelako lekukotasunak ditugu (Gallastegi 2004: 33-34).

Lapurdiko Biltzarrean, berriz, bilkurak euskaraz egiten ziren, nahiz eta Erregeren komisarioari erabakien berri frantsesez ematen zitzaion, idatziz (Lafourcade 2003: 595).

Azken finean, herri-erakundeetan zein justizian, euskara gehienez ere ahozko jardunetara mugatzen da, idatzietarako erdaretara (frantsesa, gaztelania, bearnesa) jotzen baita.

#### *1.2.2. Elizaren jarrera: Kontrarreforma katolikoa*

Aztergai dugun garaian, Eliza izan zen euskararen erabilera —ahozkoa zein idatzizkoa— gehien bultzatu zuena. Izan ere, dotrina katolikoa herritarren artean zabaltzeko asmoarekin, Trentoko Kontzilioaren ondoko erreformak lekua egin zien herri-hizkuntzei.

7. Nahiz eta mende bat lehenago tarteka euskarara jo ohi zuten ordezkari guztiek testu ofizialak ulertzeko gisan (Gallastegi 2004: 31).

8. Halere, garai hartan ere euskara ez zen arras desagertu erakunde publiko honetatik: 1689an dokumentu ofizial bat bi hizkuntzetan —gaztelaniaz eta euskaraz— idatzi zen, eta badakigu 1695eko biltzar zalapartatsu batean euskarara jo behar izan zutela bertaratuak baretzeko (Gallastegi 2004: 31-34).

1602 eta 1700eko Kalagurriko Sinodalek[9] euskararen alde hartu hainbat neurriren berri ekartzen digute. Bietan, euskaraz predikatzeko eta urtero kateximak euskaraz argitaratzeko agindua ematen da, zehazkiago, Bizkaia, Araba eta Gipuzkoan bana, hiru eskualdeetan euskararen aldaera desberdinak erabiltzen direla oharturik (Urquijo 1923: 335-336, 339).[10] Halaber, garai horretan, herrietan predikari euskaldunak bermatzeko ahalegina ikusten da. Adibidez, Arrasateko San Frantzisko komentuan (1579), nola Zarauzko misiolari-etxean (1747) lehentasuna fraile euskaldunei ematen zitzaien (Intxausti 1990: 83). XVII. mendean, Hondarribian, kanpoko sermoilari euskaldunak kontratatzen zituzten inauteri eta pazko garaietan dotrinaren irakaspenak zabaltzeko eta laudatzeko, garai horietan jende franko bide zuzenetik atera ohi zelakoan (Alberdi & Aragón 2004). Ipar Euskal Herrian ere euskaraz idatziriko erlijio-liburu asko argitaratu zen Baionako, Akizeko eta Oloroeko elizbarrutien[11] babesarekin. Besteak beste, Leon apezpikuaren aginduz *Doctrina Christiana* inprimatu zen 1693an, eta Lavieuxville apezpikuaren aginduz *Guiristinoen doctrina laburra, haur-gastei irakhasteco* 1731n. Halaber, Zuberoako jendeentzat eginiko *Catechima Oloroeco* Josef de Revol Oloroeko apezpikuaren manuz inprimatu zen 1706an.[12]

Halere, neurri eta agindu horiek ez ziren nahikoak izan euskarazko idatzien kopurua Euskal Herri osoan emendatzeko. Beherago xehetasun gehiagorekin erakutsiko dugun bezala (ik. 2. atala), Iparraldean, eta berezikiago Lapurdin, XVII. mendea euskal letren gizaldia izan zen. Alderantziz, Hegoaldean biziki liburu guti argitaratu zen mende hartan —Euskara Arkaikoan bezalaxe, >; ik. aurreko kapitulua—. Oihartzabalen ustez (2001b), bi egoera horiek erraz uler daitezke garai hartako egoera diglosikoak gogoan

---

9. XVII. mendean, Bizkaiko jaurerria, Arabako probintzia osoa, Gipuzkoako probintziaren zati bat, eta Vianako eskualdea Kalagurriko Elizbarrutian zeuden. Nafarroa Garaiko eta Gipuzkoaren gainerako herriak, Iruñeko elizbarrutian zeuden, Baztan, Malerreka (San Esteban de Lerín), Bortziriak eta Oiartzun eta Bidasoa ibaien arroak (Oiartzun, Errenteria, Lezo, Pasaia, Hondarribia eta Irun) izan ezik, Baionako elizbarrutian baitzeuden.

10. Halere, gogoan izan Elizak euskararen erabilera onartu bazuen ere (ahozko eta idatzizko eginkizun batzuetarako), gaztelania eta latina ez zirela erabat baztertu.

11. Garai hartan, Baionako elizbarrutian sartzen dira Lapurdi eta Nafarroa Behereko mendebalde eta erdialdeko eskualdeak; Akizekoan, Nafarroa Beherearen ekialdeko eskualdeak (Amikuze eta Izura) eta Zuberoako ipar-mendebaldeko herriak. Gainerako Zuberoako herriak Oloroeko elizbarrutian sartzen ziren.

12. Halere, Eliza Katolikoaren hizkuntza politika berriak desadostasunak ekarri bide zituen Elizako arduradunen artean. Etxeberri Ziburukoak C. Rueil Baionako apezpikuari eskaintzen dio bere *Manuala*, egin zaion oposaketa batetik babestu duela oroitaraziz, eta ematen du hizkuntza-gatazka dela oposaketa horren oinarrian. Haranburuk (1635) ere elizgizon batzuen artean zetzan euskararekiko jarrera uzkurra aipatu zuen (Oihartzabal 2001b: 13-22).

hartuz gero. Hego Euskal Herrian, gaztelania aspalditik bilakatua zen botere eta jakitate hizkuntza (ik. 4. atala), eta horren ondorioz XVIII. mendearen bigarren erdira arte euskara nekez sartu zen idatziaren esparruan (ik. ondoko kapitulua). Iparraldean, berriz, XVII. mendean kultur hizkuntza zen latina gizartearen maila goreneko jendeek baizik ez zuten menperatzen, eta horren ondorioz euskara maila ertain eta apaleko jendeentzat eginiko idatzietara hedatu ahal izan zen. Halere, egoera horrek ez zuen luzaz iraun. XVIII. mendean zehar, frantsesa maila sozial gora eta ertaineko jendeen artean hedatu zen heinean, euskarazko obren eskaera txikitu zen eta soilik gizartearen zatitxo baten intereseko bihurtu: jende xumeena (ik. ondoko kapitulua).

### 1.3. Irakaskuntza

XVI. mendeaz geroztik, irakaskuntza-eskaintza zabala dago Hego Euskal Herrian. Lehen mailako eskolez gain,[13] bada unibertsitate andana bat (Oñati, Iratxe eta Iruñean). Haietan denetan, gaztelania da irakas hizkuntza.

Gipuzkoan irakaskuntzaren kudeaketa Biltzarraren esku izanik ere, ez zuten ahaleginik egin euskara eskolan sartzeko.[14] Larriago, euskararen kontra egiteko aginduak biltzen dira irakasleen lan-kontratuetan (Oiartzun 1728, Pasaia 1763, Aia 1763, Zarautz 1773).[15]

Bestela erranik, XVII eta XVIII. mendeetako gizartea bitan banatua da, bi errealitate sozial eta linguistikoren arabera antolatua: alde batetik, aberatsak ditugu, gaztelaniaz eskolatuak direnak; bestetik, jende xumeak, irakaskuntza erlijiozkoa baizik ez dutenak, baina euskaraz jasoa (ik. gorago § 1.2.2). Alberdi eta Aragónek (2004) azpimarratu bezala, agintari eta elizgizonek erdaraz baizik ez ikasteak euskararen mailaren apaltzea ekarri zuen, eta herri xume euskaldunaren aitzinean predikatu behar zuten apaizek gero eta maizago gaztelaniara jotzen zuten. Bi kontu horiek gogorki kritikatu zituen Larramendik (*Cor,* 286-288). XVIII. mendearen erdialdean, irakaskuntza katolikoa jende xeheen artean bermatzeko asmoarekin, gizarteko hainbat elizgizon euskara lantzen hasi

13. XVI. mendean lehen mailako eskolak ugari dira Iruñean eta Iruñetik kanpo ere (Muruzabal, Burlata, Obanos, Beraskoain, Artaxoa).

14. Larramendik ondotxo deskribatu zuen garai hartan euskarak irakaskuntzan zuen toki eza: «Nada se lee, ni escribe, ni se enseña à los niños en Bascuence; no hai maestro que quiera, ni sepa deletrear en su lengua» (Larramendi 1745-I: liv).

15. «…que tengan assi mismo cuidado para que se enseñen y insttruian en la lengua Castellana prohiviendo que enttre si en la escuela y fuera hablen la Bascongada imponiendo algun casttigo en casso de no observar estta prohivicion…» (GPAO, 2/1393, 108 al.-109 ir., *apud* Alberdi & Aragón 2004).

ziren, predikuetako hizkuntza zainduz. Larramendik abiatu mugimendua giro horretan garatu zen (ik. ondoko kapitulua).

xviii. mendera arte, Iparraldeko biztanleak Euskal Herritik atera behar ziren heziketa aitzinatuxe baten jasotzeko eta frantsesa ikasteko (Oihartzabal 2001b). Gauzak horrela, aztergai dugun garaian irakaskuntza laikoak ez zuen ez aldeko ez kontrako eraginik izan euskararen egoeran. Gogora dezagun Etxeberri Sarakoak, euskara irakaskuntzarako hizkuntza bihurtzeko garrantzia ikusteaz gain, lehen urratsa ere egin zuela latina ikasteko gramatika euskaraz idatziz (ik. beherago § 5.3).

## 2. LEKUKOTASUNAK

Euskara Zaharraren mende eta erdi honetan euskal testuen kopurua gora doa, nahiz eta ohartarazi behar dugun testu luze gehienak lapurteraz idazten direla. Gainera, Pirinioetako bi aldeetan euskarazko obra asko inprimatu ziren; bereziki, Iparraldeko erlijiozko prosa eta poesia liburu elebakarrak; Hegoaldean, aldiz, dotrinak eta bestelako eliza liburu elebidunak iritsi ziren moldiztegira. Haien guztien aldean mota askotako hainbat testu xume ere idatzi ziren. Adibidez, gehienbat molde herrikoak darabiltzaten olerki eta bertsoak: 1609 eta 1610ean Iruñean saritutako olerkiak, Tolosako bertso iraingarriak (1619), *Egiaren kanta* (*c.* 1638), *Eibarko koplak* (1685), *Bertso Bizkaitarrak* (*c.* 1688), Lasarteko bertso paperak (1716)… Hainbat gutun gorde zaizkigu, hala esparru pribatu nola administratibokoak: esaterako, Zuberoa eta Erronkariren arteko gutuneria (1615-1617), Azpeitiko gutunak (1622), Fermin Basabilbasorena (1638), Frai Domingo Lardizabalena (1655), Urruña eta Hondarribiaren arteko gutuneria (1680) eta Jose Elizalderen gutunak (1693, 1699). Halaber, auzi paperetan agertutako euskarazko testu eta esaldi batzuk ditugu, gehienak Nafarroa Garaikoak: Leitzako apaizaren kontrako auzia (1626), Eloko apaizaren kontrakoa (1629), Altsasuko bikarioaren eta Burundako alkatearen artekoa (1648) eta Izarbeibarko auzia (1650 ingurukoa), besteak beste. Azkenik, euskaraz idatzitako agiri ofizial batzuk idatzi ziren, hala nola Arrasateko agiria (1705) edo Irungo Udalarenak (1721).

Lekukotasunen gaiei eta generoei dagokienez, erlijiozko gaia dutenak dira nagusi, batik bat dotrinak eta heziketa kristaurako eskuliburuak, Kontrarreforma katolikoak ezarri baitzuen dotrina tokian tokiko hizkuntzetan irakastea. Hauek dira, dakigularik eta euskalkiz euskalki, Euskara Zaharraren garaian idatzitako dotrinak:

- Bizkaieraz:
  - *Viva Jesus* deiturikoa (*c.* 1640)
  - Martin Otxoa Kapanagaren *Exposición breve de la doctrina christiana*

*compuesta por el P. M. Geronimo de Ripalda de la compañia de Iesus* (Bilbo, 1656)
- Amilletaren *Preguntas y respuestas de la doctrina Christiana en bascuence* eskuizkribua (1678)
- Nicolas Zubiaren *Doctrina christiana* galdua (Donostia, 1691); zati batzuk Josef Lezamizen *Vida del Apostol Santiago el Mayor* liburuan jaso ziren (Mexiko, 1699)
- Martin Arzadunen *Doctrina christianeen explicacinoa* (Durango, 1731)

- Goi-nafarreraz:
  - Joan Beriainen *Doctrina Christiana escrita en Romance y Bascuence* (Iruñea, 1626)
  - Frantzisko Elizalderen *Apezendaco dotrina christiana uscaras* (Iruñea, 1735)
  - Juan Bautista Sanzberroren dotrina-zati eskuizkribatuak (1749)

- Gipuzkeraz:
  - Martin Yañez Arrietak itzulitako Ripaldaren *Doctrina Christiana* (c. 1609), egun galdua
  - Jose Otxoa Arinen *Doctrina Christianaren explicacioa* (Donostia, 1713)
  - Juan Irazustaren *Doctrina Christiana eguinzuana erdaraz Aita Gaspar Astete Jesuitac* (Iruñea, 1739)
  - Zegamako *Doctrina Christianaren introduccioa* eskuizkribua (1741)
  - Sebastian Mendiburuk itzulitako eta Manuel Larramendik zuzendutako *Icasbidea. Christauen doctrina azalqueta laburraquin* (Burgos, 1747)

- Lapurteraz:
  - Esteve Materreren *Dotrina Christiana* (Bordele, 1617; 2. argit. handitua 1623)
  - Silvain Pouvreau-ren *Guiristinoaren dotrina* (Paris, 1656)
  - Leon apezpikuaren aginduz inprimatutako *Doctrina Christiana* (Baiona, 1693)
  - Lavieuxville apezpikuaren aginduz inprimatutako *Guiristinoen doctrina laburra, haur-gastei irakhasteco* (Baiona, 1731)
  - Lavieuxvilleren beraren *Bayonaco Diocesaco bigarren catichima* (Baiona, 1733)

- Behe-nafarreraz:
  - Suarez d'Aulan Akizeko apezpikuaren aginduz inprimatutako *Catichima edo Fediaren eta Guiristino-eguien explicacione laburra* (Paue, 1740)

- Zubereraz:
  - 1686ko dotrina galdua, Belapeirek berean aipatua
  - Athanase Belapeireren *Catechima laburra eta Jesus-Christ goure ginco jaunaren eçagutcia, salvatu içateco* (Paue, 1696)
  - Josef Revol Oloroeko apezpikuaren aginduz egin eta Jakes Maitiek euskaratutako *Catechima Oloroeco Diocezaren cerbutchuco* (Paue, 1706)

Alabaina, denbora labur batez, Lapurdin obra espiritual jasoagoak idatzi eta argitaratu ziren; Etxeberri Ziburukoa teologian doktorea eta Axular Sarako erretorea dirateke halako idazlanen autore gailenak:

- Joanes Etxeberri Ziburukoa, *Manual devotionezcoa, edo ezperen, oren oro escuetan erabilltçeco liburutchoa* (Bordele, 1627; 2. argit. 1669)
- Joanes Etxeberri Ziburukoa, *Noelac eta berce canta espiritual berriac* (eliz oniritzien arabera, ustez aurrenekoz 1630 edo 1631n inprimatua; lehen argit. ezaguna Bordelen 1645ean atera zen)
- Joanes Etxeberri Ziburukoa, *Eliçara erabilceco liburua* (Bordele, 1636, galdua; lehen argit. ezaguna 1665ekoa da)
- Joanes Haranburu, *Devocino escuarra, miraílla eta oracinoteguia* (Bordele, 1635); bada Kristobal Harizmendik zuzendutako 1690eko edizio bat
- Pierre Argainaratz, *Avisu eta exortacionea* […] *probetchosac bekhatorearentcat* galdua (Bordele, 1641)
- Pedro Agerre, Axular, *Guero bi partetan partitua eta berecia* (Bordele, 1643; 2. argit. *Gueroco Guero*, s.a.)

Lehen hamarkadetako loraldiaren ondoren, XVII. mendearen bigarren erdian obra originalen kopurua nabarmenki behera doa Lapurdin, itzulpen, egokitzapen eta berrargitalpenei leku eginez; joera berak jarraitzen du XVIII. mendearen lehen erdian. Lehenago aipatutako lapurterazko dotrinez gain, hauek dira mota horretako lan aipagarrienak:

- *Pregarioac Bayonaco Diocezacotz. Ioannes d'Olce Bayonaco Iaun Aphezpicuaren manamenduz ordenatuac eta imprimaraciac* (Bordele, 1651)
- Kristobal Harizmendi, *Ama Virginaren hirur officioac, latinean beçala escaraz* (Bordele, 1658?, 1660)
- Silvain Pouvreau, *San Frances de Sales Genevaco Ipizpicuaren Philotea eta chapeletaren andre Dana Mariaren ohoretan devocionerequin erraiteco Antcea* (Paris, 1664)
- Silvain Pouvreau, *Gudu espirituala* (Paris, 1665)

- Silvain Pouvreau, *Iesusen imitacionea* eskuizkribua (1669)
- Pierre Argainaratz, *Devoten breviarioa* (Bordele, 1665)
- Aranbillaga, *Jesu Christoren imitationea* (Baiona, 1684)
- Bernard Gazteluzar, *Eguia catholicac salvamendu eternalaren eguiteco necessario direnac* (Paue, 1686)
- Mixel Xurio, *Jesus-Christoren imitacionea* (Bordele, 1720)
- Pierre Urte, *Biblia Saindua*ren hasiera, hots, *Ethorquia* eta *Ilkhitcea* (*c.* 1715)
- Joanes Haraneder, *Iesu Christoren Evangelio Saindua* eskuizkribua (1740, galdua); 1770ean eskuz egindako kopia bat gorde da
- Joanes Haraneder, *Philotea edo devocioneraco bide erakusçaillea* (Tolosa, 1749)
- Joanes Haraneder, *Gudu izpirituala* (Tolosa, 1750)

Gutxiengoan izanik ere, badira erlijiozkoak ez diren beste testu mota batzuk (halako gehienen xehetasunetarako, ik. 5. atala). Adibidez, Voltoire (*c.* 1620) eta Mikoletaren (1653) hizkuntza eskuliburuak ditugu, baita 2006an aurkitu zen Lubieta donostiarrarena ere (1728); gramatika eta hiztegi batzuk idatzi ziren, baina gehienak ez ziren garai hartan inprimategira iritsi —Harrieten *Gramatica escuaraz eta francesez* (Baiona, 1741) da salbuespena—, hala nola Pouvreauren gramatika-oharrak eta hiztegia, Etxeberri Sarakoaren latin gramatika (*c.* 1712), eta Urteren gramatika (*c.* 1714) eta hiztegia (1715); batzuk galdu dira, ordea: Etxeberri Ziburukoaren hiztegia, Bidegarairen gramatika eta hiztegia, Belarenak, eta Etxeberri Sarakoaren hiztegia. Etxeberri Sarakoak berak euskararen gorazarreko *Escuararen hatsapenac* (*c.* 1712) saiakera eskuizkribatua utzi digu, baita bere lanak argitaratzeko eskaera zen *Lau-urdiri gomendiozco carta edo guthuna* ere (Baiona, 1718). Antzerki lan bakar bat heldu zaigu, eskuizkribaturik, Barrutiaren *Actto para la Nochebuena* (*c.* 1720). Gorago aipatutako olerki eta bertso herrikoiez gain, obra jasoago zenbait ere ondu ziren, eta haien artean aztarna bakan batzuk utzi dizkigun bizkaierazko maitasun poesia deiturikoa da aipagarria, baina guztietarik Oihenarten atsotitzak eta neurtitzak baino ez ziren argitara eman:

- Arnaud Oihenart, *Les proverbes basques recueillis par le Sr d'Oihenart. Plus les poesies Basques du mesme Auteur* (Paris, 1657)

Azkenik, bi lan tekniko osatu ziren, orduko ekonomiaren oinarri nagusiak ziren arrantza eta nekazaritzarekin loturik, hurrenez hurren:

- Piarres Etxeberri Dorrek euskaraturiko *Liburuhauda ixasoco nabigacionecoa* (Baiona, 1677), eta
- Mongongo Dasantzaren *Laborarien abissua* albaitaritza-lan eskuizkribatua (1692).

Beheko taulan euskalki bakoitzaren lekukotasunen kopurua jaso dugu, sasoi hartako hiru mende erdietan zehazturik; kopuruak kalkulatzeko ez ditugu berrargitalpenak kontuan hartu. Bestalde, kopuruen sailkapena ez da guztiz zehatza, zenbaitetan lekukotasunen gutxi gorabeherako datazioa besterik ez baitakigu, bibliografietako eta testuen ikerketetako datuak baliaturik («XVII. mendekoa», «*c.* 1650», «1665 baino lehenagokoa», etab.). Saiatu gara halakoak, bibliografiek eta kasuan kasuko ikertzaileek emandako datuen arabera, mende erdi batean edo bestean sartzen:

1. TAULA: LEKUKOTASUNEN KOPURUA EUSKALKIZ EUSKALKI
(berrargitalpenak aintzat hartu gabe)

| | B | A | G | GN | L | BN | Z | GUZTIRA |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| XVIIa | 8 | 2 | 10 | 13 | 11 | — | 2 | 46 |
| XVIIb | 12 | 1 | 1 | 11 | 14 | 6 | 12 | 57 |
| XVIIIa | 6 | — | 15 | 8 | 19 | 1 | 3 | 52 |
| Guztira | 26 | 3 | 26 | 32 | 44 | 7 | 17 | 155 |

Lekukotasun hauetan euskalkien arteko asimetria nabarmena dago. Izan ere, euskalki batzuk ongi lekukotuta daudelarik, beste batzuen oso testu gutxi ezagutzen ditugu, edo haien testu gehienak laburrak dira. Esate baterako, XVII. mendearen lehen erdian bizkaierazko lekukotasunak testu laburrak dira; orobat gipuzkerazko eta goi-nafarrerazko XVII.eko guztiak, Beriainen bi lanak izan ezik. Ezbairik gabe, lapurtera eta bizkaiera dira hobekien lekukotutako euskalki zaharrak. Gainera, Euskara Zaharrean lapurtera klasikoak leku berezia merezi du bere lekukotasunen hizkuntza eta literatura mailagatik; lehenengo literatur euskalkia da eta denbora luzez Iparralde osoko eredua izan zen, baita ekialderagoko idazle batzuentzat ere (Oihenart, Tartas);[16] bestalde, Hegoaldeko literatura hizkuntzan ere garrantzi handia izan du, Larramendiren egitasmotik hasi eta euskara baturaino. Bizkaiera zaharra, hainbat lekukotasun izateaz gain, zehaztasun handiz deskribatu eta ikertu den euskalki zahar bakarra da; lekukotasun gehiago dituen lapurtera klasikoa baino hobeto ezagutzen dugu, egia esan.

Beste muturrean Arabako euskara eta behe-nafarrera zaharrak ditugu: oso lekukotasun urriak dituzte eta ia aztertu gabeak. Arabako euskaran Portalen erromantzea (1610) eta Iturberen laudunak (1658) ditugu, berriki aurkitutako Sevillako kantuarekin (1619) batera, hirurak aski testu laburrak. Behe-nafarrerari zaharrari dagokionez, bestalde, Olceren *Pregariac* (1651), Tartasen *Onsa hilceco bidia* (Ortheze, 1666) eta *Arima*

16. Izan ere, arrazoi horregatik, besteak beste, zail samar gertatzen da Oihenart eta Tartas euskalki jakin bati atxikitzea. Kapitulu honetan, behin-behinean, Oihenart zubereran sailkatu dugu eta Tartas behe-nafarreran (ik., hala ere, Camino 2008).

*penitentaren occupatione devotaq* (Ortheze, 1672) eta Mongongo Dasantzaren *Laborarien abissua* (1692) dira obra aipagarrienak, eta ia bakarrak. Goi-nafarrera zaharrean, bere aldetik, lekukotasun gehienak, ugaritxo izanik ere, testu laburrak dira, zenbaitetan lerro edo are hitz bakan batzuk besterik ez dute; hala ere, lehen lekukotasun luzeak ditu garai honetan: Beriainen *Tratado de como se ha de oir misa* (Iruñea, 1621) eta dotrina (1626), eta Elizalderen dotrina (1735). Orobat, beranduxeago hasita, gipuzkera zaharrak: Otxoa Arinen dotrina (1713) eta Irazustarena (1739); hala ere, 1740ko hamarkadan gipuzkerazko testuak ugaritzen hasten dira, euskalki honek lehen euskara modernoan izango duen goraldiaren aurrekari. Azkenik, zuberera zaharrari dagokionez, lekukotasun luze batzuk ditugu, hala nola Oihenarten errefrauak eta poemak (1657), Belapeireren dotrina (1696), *Uscara libria* debozio-liburu anonimoa (XVII. mendearen azken herenekoa), Oloroeko dotrina (1706) eta Martin Maisterren *Jesu-Kristen imitacionia* (Paue, 1757).

Bigarren taulan lekukotasunak bertsoz ala hitz lauz idatzi ziren jaso dugu. Bestelakoetan gramatika-testuak, hiztegiak eta errefrau bildumak sailkatu ditugu. Prosa eta poesia biltzen dituzten lanei dagokienez, testu mota bakoitzak obraren barruan duen garrantziaren arabera sailkatu ditugu. Esaterako, Argainaratzen *Devoten breviarioa* bertsozko lanen artean sartu dugu, liburuaren amaieran dagoen prosazko dotrina betegarria-edo delakoan. Ohargarria da goi-nafarrera zaharrean dauden prosazko testuen nabartasuna, gehienak laburrak izanik ere: dotrinak, gutunak, administrazio agiriak, auzi paperak, predikuak, etab.:

2. TAULA: LEKUKOTASUNAK BERTSOZ ALA HITZ LAUZ IDATZI ZIREN

| | B | A | G | GN | L | BN | Z | GUZTIRA |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| Bertsoa | 15 | 3 | 6 | 7 | 8 | — | 3 | 42 |
| Prosa | 10 | — | 18 | 25 | 27 | 7 | 9 | 96 |
| Bestelakoak | 1 | — | 2 | — | 9 | — | 5 | 17 |
| Guztira | 26 | 3 | 26 | 32 | 44 | 7 | 17 | 155 |

Hirugarren taulak gorde zaizkigun lekukotasunak eskuizkribuak ala inprimatuak diren islatzen du; galdutako lekukotasunen kopurua ere jaso dugu, oraingoan euskarria zehaztu gabe. Inprimatuei dagokienez, parentesien artean zehaztu dugu euskalki bakoitzean idatzita zenbat liburu argitaratu ziren, horretarako UNESCOk ematen duen liburuaren definizioa irizpide izanik (49 orrialde edo gehiago dituen obra inprimatua):

3. TAULA: LEKUKOTASUNAK ESKUIZKRIBUAK ALA INPRIMATUAK DIREN

| | B | A | G | GN | L | BN | Z | GUZTIRA |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| Eskuizkribuak | 19 | — | 18 | 19 | 12 | 2 | 6 | 72 |
| Inprimatuak | 6 (3) | 3 | 7 (5) | 12 (3) | 27 (24) | 5 (3) | 8 (6) | 70 |
| Galduak | 1 | — | 1 | 1 | 5 | — | 3 | 13 |
| Guztira | 26 | 3 | 26 | 32 | 44 | 7 | 17 | 155 |

Bizkaieraz inprimatutako liburuak dotrinak (Kapanaga, Arzadun) eta Diego Lorenzo Urkizuren *Liburu Virgina Santissimien errosario santuena* (Iruñea, 1737) dira; *Viva Jesus* dotrinak tamaina txikia duenez (16 or.), liburuxkatzat hartu dugu. Arabako lekukotasun guztiak inprimatuak dira, baina hirurak obra luzeagoen barruan txertatzen dira. Gipuzkeraz argitaratutako lanetarik beste liburu batzuetan sartutako bi testu labur daude, hiru dotrina (Otxoa Arin, Irazusta eta Burgoskoa) eta Kardaberazen eta Mendibururen lehenengo liburuak:

- Agustin Kardaberaz, *Cristavaren vicitza edo orretaraco vide erreza bere amabi pausoaquin* (Iruñea, 1744)
- Sebastian Mendiburu, *Jesusen compañiaco A. Sebastian Mendiburuc euscaraz eracusten duen Jesusen bihotzaren devocioa* (Donostia, 1747)

Goi-nafarreraz ere, Beriainen (1621, 1626) eta Elizalderen (1735) liburuak izan ezik, inprimatu guztiak beste lan batzuetan sartutako obra laburrak dira. Liburuen kopuru altuena lapurteran aurkitzen dugu, hogeita lau guztira; hauexek dira: Voltoireren hizkuntza eskuliburua (*c.* 1620), Materre (1617), Etxeberri Ziburukoaren hirurak (1627, 1630-31, 1636), Haranburu (1635), Axular (1643), Olceren *Pregarioac* (1651), Harizmendi (1660), Pouvreauren hirurak (1656, 1664, 1665), Argainaratz (1665), Etxeberri Dorre (1677), Aranbillaga (1684), Gazteluzar (1686), *Exercicio spirituala* (Baiona, 1716), Xurio (1716), Lavieuxville-ren bi dotrinak (1731, 1733), Harriet (1741), Haranederren biak (1749, 1750) eta *Urthe Sainduco Jubilaueco othoitzac* (Baiona, 1751). Bestalde, lapurtera zaharreko hiru liburuxka ditugu: Leonen dotrina (1693), Etxeberri Sarakoaren *Lau-urdiri gomendiozco carta edo guthuna* (1718) eta *Ama Virginaren iragaitça Oracino debota contemplacinos betea* (Baiona, *c.* 1736).

Deigarria dateke behe-nafarrera zaharrean dagoen inprimatuen portzentajea, baina zinez harrigarria dena da bakarrik bi eskuizkribu gorde izana; behe-nafarreraz hiru liburu ditugu —Tartasen biak (1666, 1672) eta Suarez d'Aulanen 1740ko dotrina—, Mongongo Dasantzaren liburuxka (1692) eta frantsesezko antzerki lan batean sartutako euskarazko pasarte bat. Zubereraz, sei liburu inprimatu ziren: Oihenartena (1657),

Belapeireren dotrina (1696), *Uscara libria* izengabea, Oloroeko dotrina (1706), *Othoitce eta cantica espiritualac* (Paue, 1734) eta Maisterrena (1757); gainerako inprimatuak *Pronus singulis diebus dominicis* otoitz-liburuxka (*c.* 1676) eta Oihenarten *Notitia*ko euskarazko lekukotasunak (1638/1656) dira.

Laugarren taulak Euskara Zaharreko obren argitalpen modernoen (XIX. mende amaieratik aurrerakoen) berri ematen du, faksimile hutsa izan edo edizio paleografikoa zein —askoz bakanagoak— edizio kritikoak izan. Hirugarren sailean, edizio modernorik izan ez duten inprimatuak, eskuizkribu argitaragabeak eta lan galduak sartu ditugu. Obra batek faksimilea eta edizio modernoa izanez gero, edizio modernoa dutenen artean sailkatu dugu; beraz, aintzat hartu faksimilez argitaratutako lanak gehiago direla. Alabaina, ez ditugu kontuan hartu faksimile digitalizatuak, ez eta *Klasikoen gordailua* webgunean (http://klasikoak.armiarma.eus) soilik argitaratutako testuak ere.

4. TAULA: LEKUKOTASUNEN ARGITALPEN FAKSIMILEAK ETA EDIZIO MODERNOAK

| | B | A | G | GN | L | BN | Z | GUZTIRA |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| (Berriz) argitaratu gabeak | 2 | — | 4 | 1 | 18 | 1 | 6 | 32 |
| Faksimileak | — | — | — | 1 | 3 | 1 | — | 5 |
| Edizio modernoak | 24 | 3 | 22 | 30 | 23 | 5 | 11 | 118 |
| Guztira | 26 | 3 | 26 | 32 | 44 | 7 | 17 | 155 |

Osotasun nahirik gabe, Euskara Zahar eta Klasikoko lanen edizioen egoera zirriborratuko dugu ondoren. Obra nagusi batzuk ez dira inoiz argitaratu (Pouvreauren hiztegia, kasu), edo ez dute edizio moderno egokirik izan; askok ezta berrargitalpen faksimilerik ere. Bizkaiera zaharrari dagokionez, garaiko bi libururen edizio modernoak falta dira: Arzadunen dotrinak (1731) ez du, ezta Urkizuk (1737) ere. Gipuzkeraz, berriz, edizio modernorik gabekoen artean, Irazustaren dotrina (1739) —edizio zaharren erkatze ezin interesgarriagoa ere falta da— eta Kardaberazen *Cristavaren bicitza* (1744) ditugu. Oso deigarria da lapurtera klasikoko zenbat liburuk ez duten edizio modernorik ezta faksimilerik ere izan; egoera horretan daude obra hauek: Haranburu (1635), Etxeberri Ziburukoa (1636), Olceren *Pregarioac* (1651), Pouvreau (1656, 1664, 1665), Aranbillaga (1684), Leonen dotrina (1693), Lavieuxvilleren lehen dotrina (1731), Harriet (1741) —gramatikako hiztegiak baino ez dira berriz argitaratu— eta Haraneder (1749). Behe-nafarreraz, Suarez d'Aulanen dotrina (1740) dago ordutik berriz argitaratu gabe. Azkenik, zubereraz, *Uscara libria* izengabeak, Oloroeko dotrinak (1706) eta *Othoitce eta cantica espiritualac* liburuak (1734) ez dute edizio moderno ez faksimilerik izan.

Faksimileei dagokienez, bereziki aipagarria da Hordago (Lur) argitaletxeak 1978-1980. urteen bitartean kaleratu zuen euskal klasikoen bilduma; bertan agertu ziren, Euskara Zaharra denaz bezainbatean, Beriain (1621; Bonaparteren liburutegiko ale osatu gabea erabili zuten, geroago Madrilen agertutako ale bati esker Caminok eta Lakarrak osatua; 1980), Etxeberri Ziburukoa (1627, baina 1669ko edizioaren faksimilea da; 1978), Harizmendi (1658?, baina Vinsonen edizioaren faksimilea da; 1978), Argainaratz (1665, Vinsonen edizioaren faksimilea; 1978), Pouvreauren zenbait eskuizkribu labur (Vinsonen edizioaren faksimilea; 1978) eta Xurio (1720, baina 1788ko edizioaren faksimilea da; 1978). Hordagoren bildumakoetatik kanpo, beste faksimile hauek nabarmendu ditzakegu: Euskaltzaindiak argitaraturiko *Gero*rena (1643; Bilbo, 1988), Materrerena (1623; Bilbo, 2008), eta A. Arejitak prestaturiko Kapanagaren dotrinarena, haren azterketarekin lagundurik (1656; Bilbo, 2008).

Testu labur gehienek edizio modernoa dute —edizio paleografikoa gehienbat—, batez ere Mitxelenaren *TAV*, Sarasolaren *ConTAV* eta Satrustegiren *Euskal testu zaharrak* bildumetan; beste testu labur askoren edizioak aldizkari espezializatuetan agerrarazi dira. Edizio modernoei dagokienez, aurrenekoak Bonaparte printzearen eta haren laguntzaile batzuen eskutik etorri ziren: Intxauspek Axular (1643; Baiona, 1864) argitaratu zuen, testuaren egitura moldaturik, eta Bonapartek Olceren *Pregariac* faksimilez inprimatu zuen (1651; Londres, 1866). XIX. mende amaieran eta XX.aren hasieran Julien Vinsonek Euskara Zaharreko zenbait eskuizkribu eta inprimatu argitara eman zituen; Vinsonen edizioen zehaztasun filologikoa zalantzazkoa dateke, baina aitortu behar da ziurrenik haren edizioei esker zenbait testu gorde zaizkigula, hala nola Harizmendi (1658?; Chalon-sur-Saône, 1901) edo Argainaratzenak (1665; Chalon-sur-Saône, 1910), artean ale bakar bana ezagutzen baitziren. Haietaz gain, Vinsonek Zubiaren dotrinaren zati gordeak (*RLPhC* 1887), Pouvreauren eskuizkribu batzuk —*Petites oeuvres basques* izenburupean (Chalon-sur-Saône, 1892)— eta Urteren gramatikako hiztegiak (A. Clark-ekin batera, *RLPhC* 1893-94) argitaratu zituen.

Lehenengo edizio modernoen artean Edward S. Dodgson euskalari britainiarrak argitara emanak ere aipatu behar dira: Mikoleta (1653; Sevilla, 1897), Kapanaga (1656; Viseu, 1893), Otxoa Arin (1713; Donostia, 1902) eta Mendibururen (1747; Donostia, 1900) lanen edizioak paratu zituen, nahiz eta zenbaitetan huts franko egin. Bestalde, XX. mende hasierakoa da Etxeberri Sarakoaren lanen lehen edizioa, Julio Urkixok prestatua (Paris, 1907); ez da Sarakoaren lan osoa, haatik, beste ediziogile askok bezala, Urkixok euskaraz ez zeuden zatiak kendu zituelako. Lehenengo edizio modernoekin amaitzeko, Thomasek Urteren Bibliaren hasieraren itzulpena argitaratu zuen (Oxford, 1894), Websterrek Urteren gramatika (Bagnères-de-Bigorre, 1900) eta Azkuek Barrutiaren antzezlana (*Euskalzale* 1896).

Salbuespenak salbuespen, garbizaletasunak lehenik, eta gerrek eta gerraondoek gero, eten nabarmen bat ekarri zuten euskal testu zaharren ediziogintzan. 1950eko hamarkadan M. Lekuonak Axularren *Gero* argitaratu zuen, argi-ilunak dituen edizio bat lortuz (1643; Zarautz, 1954); L. Villasantek, ondoren, bi aldiz agerrarazi zuen Axularren lana, gaztelaniazko itzulpena erantsirik (Bartzelona, 1964 eta Oñati, 1976); hiru edizioetan Mitxelenak gutxi-asko parte hartu zuen; berriki B. Urgellek paraturiko edizio kritiko bat plazaratu da (Iruñea & Bilbo, 2015). Hamarkada haietan Euskara Zahar eta Klasikoko beste zenbait lan argitaratu ziren, gehienetan edizio paleografikoen bidez, eta ez beti behar bezain zainduak: adibidez, G. Arestik Barrutiaren antzezlanaren bi edizio burutu zituen (*Euskera* 1960; Tolosa, 1965); urte batzuk geroago J. Lakarrak Barrutiaren lanaren lehen edizio kritikoa argitaratu zuen (Gasteiz, 1983), baina zorte txarra izan zuen, ez baitzuen erabiltzerik izan urte berean Latxagak argitaratutako eskuizkribu originalaren faksimilea (Tolosa, 1983). I. Galarragak eta J. Zabaletak Pouvreauren *Imitacionea* argitaratu zuten (1669; Donostia, 1979), Hordagoren bilduman faksimilea ez den edizio bakarra izanik. L. Akesolok lapurtera klasikoko bi obraren edizioak prestatu zituen: Etxeberri Ziburukoa (1630-31, nahiz ez zuen zein ediziotan oinarritu zen zehaztu; Donostia, 1970) eta Gazteluzar (1686; Bilbo, 1983).

Azken hori Euskaltzaindiak argitaratzen duen «Euskararen Lekukoak» bilduman atera zen, Euskara Zaharreko beste lan batzuk bezala: J. L. Davantek Belapeire (1696; 1983) paratu zuen, Villasantek Lavieuxvilleren bigarren dotrina (1733; 1985), eta P. Altunak Etxeberri Ziburukoaren *Manual*aren lehen liburuaren (1627; 1981), Mendibururen zenbait eskuizkriburen (1982) eta Haranederren *Evangelio Saindua*ren (1669; 1990) edizio kritikoak ondu zituen, urte haietako hala-holako edizioen artean eredugarriak —ezen ez eredu, tamalez— izan zirenak. Altunak berak Tartasen bi liburuen edizioak kaleratu zituen (1666; Bilbo 1987, 1995 / 1672; Bilbo 1996). Bestalde, J. B. Orpustanek Oihenarten atsotitzen eta neurtitzen edizioa prestatu zuen (1657; Baigorri, 1992) eta geroago Altunak eta J. A. Mujikak berriz argitaratu zituzten (Bilbo, 2003); P. Agirreren doktorego-tesiak Belapeireren edizio kritikoa eta azterketa sartzen ditu (1696; Gasteiz, 1997); berrikiago, Davantek Maister (1757; Bilbo 2009) argitaratu du.

Amaitzeko, aipamen berezia merezi dute azken hamarkadetan egindako hizkuntza liburuen edizioek. Hala, P. Urkizuk Urteren hiztegia argitaratu zuen (1715; Donostia, 1989) eta Lakarrak Harrieten gramatikako hiztegiak (1741; *ASJU* 1994); A. Zelaietak Mikoleta (1653) bitan agerrarazi zuen (*Hizkuntza eta Literatura* 1988; Bilbo, 1995); Lakarrak Voltoire-ren edizio kritikoa ere paratu zuen (*c.* 1620; *ASJU* 1997, 1999). Azkenik, G. Bilbaok prestatuak, Etxeberri Sarakoaren lan guztiak eta Lubietaren hizkuntza eskuliburua (1728) argitara bidean daude.

## 3. LEKUKOTASUNEN AZTERKETA

Hirugarren atal hau Euskara Zaharraren deskribapen linguistikoari eskainia da. Zehazkiago, 1600 eta 1745 bitarteko euskararen grafia (§ 3.1), fonologia (§ 3.2), izenaren morfologia (§ 3.3), aditza (§ 3.4), joskera (§ 3.5) eta lexikoa (§ 3.6) lantzen ditu. Azkenik, Euskara Arkaikoa eta Euskara Zaharra bereizten dituzten hizkuntz ezaugarriak biltzen dira (§ 3.7). Atalean zehar laburdura hauek erabili ditugu, ahal delarik *Orotariko Euskal Hiztegi*koak baliatuz, euskaratuz edo haien eredura sortuz: A: Arabako euskara, B: bizkaiera, BN: behenafarrera, G: gipuzkera, GN: goi-nafarrera, Z: zuberera; *TAV*: *Textos Arcaicos Vascos*; Am: Amilleta, Arbill: Aranbillaga, Arg: Argainaratz, Arz: Arzadun, Ax: Axular, Azp: Azpeitiko gutunak, Bar: Barrutia, *BB*: *Bertso Bizkaitarrak* (*c.* 1688), Ber: Beriain, Bp: Belapeire, *CatOlo*: Oloroeko katexima (1706), *EgiaK*: *Egiaren Kanta* (*c.* 1638), El: Elizalde, ES: Etxeberri Sarakoa, Etxp: Etxepare, Etxt: Gabriel Etxart, EZ: Etxeberri Ziburukoa, *GNSerm*: goi-nafarrerazko lehen sermoia (1729), Gz: Gazteluzar, Harb: Haranburu, He: Haraneder, Hm: Harizmendi, Ht: Harriet, Iraz: Irazusta, Irñ 1609: 1609ko Iruñeko olerkiak, It: Iturbe, Kap: Kapanaga, Laz: Lazarraga, Mat: Materre, Mik: Mikoleta, Mst: Maister, OA: Otxoa Arin, Oih: Oihenart, Prt: Portal, SP: Pouvreau, TBI: Tolosako bertso iraingarriak (1619), Tt: Tartas, Urk: Urkizu, Urt: Urte, *VJ*: *Viva Jesus*, Xu: Xurio, Zeg: Zegamako dotrina, Zub: Zubia, Zub-Lez: Zubia-Lezamiz dotrina (1691).

### 3.1. Grafia

Euskara Zaharrean, euskararen sistema grafikoa inguruko erdaren ortografien menpe dago oraindik. Erabiltzen diren grafema gehienak gaztelania, frantsesa eta gaskoierarenak dira; hortaz, euskarak dituen fonema batzuk ez dira behar bezala aurkezten (txistukari afrikatuak, adibidez), eta beste batzuek, tradizio erromantzeari jarraikiz, grafema bat baino gehiago dute —adibidez, herskari biezpainkaria, <b> eta <v> grafemen bidez islatua—.

Gutxi dira euskararen hotsei begira eratutako sistema grafikoak, gutxi Euskara Zaharrean euskal grafiari buruz idatzi gogoetatze eta saioak. Bi autorek baizik ez dute horrelako idazkirik utzi: Oihenart (1657) eta Urtek (*c.* 1714). *Les proverbes basques recueillis par le Sr d'Oihenart, plus les poésies basques du mesme auteur* atsotitz eta olerki bildumaren hitzaurrean, Oihenartek proposatu grafemen eta haien interpretazioaren berri ematen du. Erran behar dugu sistema ausarta eta konplexua asmatu zuela, euskararen hotsak ahal bezain hobekien islatzeko asmoz: besteak beste, <s> = /s/, <ʃ> =/ś/, <x> = /ʃ/, <z> = /ts/, <z˙> = /tś/, <x˙> = /tʃ/, <pʿ> = /p$^{h}$/, <tʿ> = /t$^{h}$/, <kʿ> = /k$^{h}$/. Bizkitartean, grafia-sistema horrek ez zuen batere segidarik izan erdal grafiatik hainbeste urruntzeak izutu bide zituelako erdaraz alfabetatuak ziren

euskal idazleak. Inprentek berek ere oztopatu bide zuten ortografia horren zabaltzea, grafema berezi bakoitzari zegokion moldezko letra ez zutelako eskura eta erostea ez zitzaielako errentagarria euskarazko ekoizpena hain txikia izanik. Haren ondotik, Urtek (*c.* 1714) bere gramatikaren hasieran euskal ortografiari buruzko oharrak plazaratu zituen, «L'orthographe cantabrique» izeneko atalean. Bertan, *e* eta *i* bokalen aurrean hain ohikoak ez diren <ç> eta <tç> grafemen, edo <tss> grafemaren erabilera proposatzen du.

Halere, nahiz eta gehienak isilpean gelditu ziren,[17] euskaraz idatzi zuten idazle gehienek (gutxieneko) gogoetatzeak burutu zituzten idatz sistema hoberena hautatzeko. Horren lekuko ditugu testuz testu eginiko grafiaren egokitzapenak, eta autoreen arteko eraginak —Axularren idazkeraren eragina ikusten dugu Etxeberri Sarakoaren lanetan, Belapeirerena (1696) edo Maytieren kateximan (1706) (Mujika 2002)—. Gutxi dira lapurtera klasikoaren edo garaian eratuz joan zen sistema grafikotik aparte ibili ziren lapurtarrak, eta grafia nahasia erabili zutenak. Aipa ditzakegu Etxeberri Dorre (1677) eta Voltoire (*c.* 1620), eta testu laburretako autoreak.

Hegoaldean, idazlanak gutxiago izanik, eta lau lurraldeetan sakabanatuak, iduri luke egile bakoitza bere aldetik aritu zela sistema grafiko egokienaren bila. Gutxienez, autoreen arteko eraginak ez dira Iparraldean bezain argiak.

Jarraian, /i/, /u/, /y/ bokalak, /b/ herskari biezpainkaria eta txistukariak baizik ez ditugu aztertuko, Euskara Zaharrean beren adierazpen grafikoan aldaketak izan dituztenak baitira, hain zuzen. Bukatuko dugu garai honetan ohikoa zen idazkera etimologikoari buruz hitz bat erranez.

### *3.1.1. Bokalak*

Atal honetan, /i/, /u/ eta zuberotarren /y/ bokal itxiak baizik ez ditugu aipatuko, gainerako bokalak (/a/, /e/ eta /o/) lehen testuetatik gaur egun arte grafema beren bidez adierazi direlako: <a>, <e> eta <o>.

Aurreko bokal itxiarekin hasteko (/i/), gogora ekarri nahi genuke hastapenean <i> eta <j> grafemak letra beraren aldaerak baizik ez zirela. Gainera, XVII. mendearen bukaera arte, letra horrek hiru balio zituen: /i/ bokalikoa (*ni*), /i̯/ bokalerdia (*mahai*) eta /ɟ/ kontsonantea (*iauna*). Bestalde, <y> grafema ere erabiltzen da; bizkitartean, aztergai dugun garaian balio bokalikoa du normalean: /i/ bokala (*ygorri*) edo /i̯/ bokalerdia

17. Axular salbuespena genuke, *Gero*-ren sarreran erabiltzen dituen grafema batzuen inguruko oharrak egiten baititu. Bertan abisatzen du <tt> grafema erabiliko duela herskari horzkari sabaikaria adierazteko: «Espaiñolac ere bi L eguiten baititu bat, *llamo*, *lloro*: hala euscarac ere bi T eguiten dituela bat, *ttipia*, *ttipittoa*, *guiçonttoa*, *haurttoa*. Ceren esquiribatcera *chipia*, *chipichoa*, *guiçonchoa*, *haurchoa* ezta ongui heldu, euscaraz ongui minçatcen direnen artean» (Ax 18).

(*bayna*). 1680. urtetik aitzina, frantsesaren ortografian eginiko aldaketari jarraikiz, euskal idazleak hasten dira bokala eta kontsonantea bereizten, bokalarentzat <i>, eta kontsonantearentzat <j> hobetsiz. Halere, /ɟ/ kontsonantea ez zen berehala <j> grafema bakarraren bidez agertu, hiru grafemaren bidez adierazirik aurkitzen baitugu Euskara Zaharraren azken garaietan ere: <i> grafema *a*, *o* eta *u* bokalen aurrean (*iaun*, *ioan*, *iudu*), <g> grafema *e* eta *i* aurrean (*gende*, *gin*), eta <j> (*jaun*, *joan*).

Gero, /u/ atzeko bokal itxia hiru grafemak adierazirik ager dakiguke 1680 inguru arte: minuskulaz idatziz geroz, <v> hitz hasieran eta <u> gainerako testuinguruetan, eta hizki larriz <V>. Aipatutako hiru grafema horiek balio kontsonantikoa ere har zezaketen, herskari biezpainkariarena, hain zuzen. Alabaina, XVI. mendeaz geroztik, bereziki inprentaren hedatzearekin, bokalarentzat <u, U> eta kontsonantearentzat <v, V> erabiltzen hasi zen, nahiz eta bereizketa hori ez zen orokortu XVIII. mendera arte. Iparraldean, Aranbillaga dugu joera zahar eta berriaren arteko muga: salbuespenak salbuespen, haren obratik aitzina, autoreek <u> erabiltzen dute bokala adierazteko, eta <v> kontsonantera mugatzen (Mujika 2002: 153). Hegoaldean ere, antzeko muga kronologikoa dukegu. Beriain, Mikoleta, eta Kapanagak <u> nagusiaren ondoan <v> grafema ere erabiltzen dute atzeko bokal itxia adierazteko, hitz hasieran eta letra larriz idaztean. Zubia-Lezamiz dotrinan, berriz, <u> baizik ez da erabiltzen testuinguru guztietan. Halere, XVIII. mendearen lehen erdian <u> orokortua izanagatik, salbuespenak aurkitzen dira han-hemenka: *Jesvs* (El 29), *vrteosso* (Arz 40), *vrteguino* (Arz 40).

Azkenik, normalean zuberotarrek <ou> grafema erabiltzen dute atzeko bokala adierazteko (/u/), eta <u> atxikitzen beren seigarren bokalerako (/y/): *hirour* (Bp 131), *issouri* (Bp 61) vs *bekhatu* (Bp 68), *ehun* (Bp 26). Zalgize eta Tartas garai honetan bi bokalak grafikoki bereizten ez dituzten bakarrak dira.

### *3.1.2. Herskariak*

Euskara Zaharraren hastapenean, herskari biezpainkari ahostuna (/b/) hiru grafemaren bidez adierazten da: <b>, <v>, <u>. Halere, haien artean <b> grafema da gehien erabiltzen dena (*bera* Zub-Lez 24; *bacarr* Mik 12r, *bider* Mik 14r; *bague* Ber *Doc* 99r, *bear* Ber *Doc* 101r; *daben* Kap 29, *bigarrena* Kap 32). Beste biak, nahiz eta nagusiki maileguetan lekukotzen diren (*salvadore* Zub-Lez 47; *ventanatic* Mik 12r, *prouechua* Mik 12r; *vedeincatua* Kap 5, *seruietaco* Kap 23), ez dira arrotzak euskal jatorriko hitzetan ere (*viciza* Zub-Lez 99; *vostac* Mik 12r, *garuienac* Mik 13v; *necesidadeuagaric* Kap 8, *vere* Kap 33; *alaver* Ber *Doc* 97).

Inguruko erromantzeetan gertatu aldaketa grafikoari jarraikiz, euskara zaharraren azken garairako <u> grafemak atzeko bokal itxia baizik ez du adierazten (/u/), eta

<b> eta <v> banaketa osagarrian erabiltzen dira, herskaria adierazteko, lehena euskal jatorriko hitzetan, bigarrena maileguetan —salbuespenak salbuespen (*vioceco* Arz 39)—. Halere, idazle lapurtar zenbaitek maileguetan ere <b> grafema hobesteko joera daukate: XVII. mendean, Etxeberri Ziburukoa eta Axularrek (*borondate* EZ *Man* II, 15, *bentzutu* EZ *Man* II, 16), XVIII. mendean, Etxeberri Sarakoa, Xurio eta Urtek (*cerbitçari* ES 25, *salbamendu* ES 24; *abisu* Xu 1, *debocione* Xu 14).

### *3.1.3. Txistukariak*

Aurreko garaian, txistukarien adierazpen grafikoak zalantza handiak sortzen ditu euskaraz idazten duen ororen baitan. Gehienek grafema berak erabiltzen dituzte txistukari frikari eta afrikatuen adierazteko, Landucci eta Leizarraga salbuespena izanik. Euskara Zaharrean, ordea, bi joera daude: Iparraldekoa eta Hegoaldekoa.

Iparraldean, Leizarragari jarraikiz, autore gehienek[18] txistukari frikari eta afrikatuak grafikoki bereizten dituzte. Azpimarratzekoa da Leizarragak bizkarkari afrikatua <tz> grafema bakarraz eta frikaria <c>$^{e,i}$, <ç>$^{a,o,u}$, <z> hiru grafemen bidez adierazi bazituen ere, haren ondotik bereizketa grafikoa ekarri duten autoreek frikarientzat <c>$^{e,i}$, <ç>$^{a,o,u}$ eta <z>, eta afrikatuentzat <tc>$^{e,i}$, <tç>$^{a,o,u}$ eta <tz> grafemak erabili dituztela; besteak beste, Etxeberri Ziburukoa (1630, 1636), Haranburu (1635), Gazteluzar (1686), Tartas (1666) eta Belapeirek (1696). Salbuespenak salbuespen, <s> eta <ts> grafemen bidez adierazten dira apikari frikaria eta afrikatua, aurreko garaian afrikaturako erabili <x> eta <tx> grafemak bazterturik. Sabaiaurrekoari dagokionez, <ch> frikaria eta <tch> afrikatua bereizi ohi dituzte Euskara Zaharreko Iparraldeko autoreek.

Hegoaldean, nahiz eta bereizketa grafikoa Larramendiren eraginez finkatu zen (ik. ondoko kapitulua), frikariak afrikatuetatik bereizteko saioak ez dira falta Euskara Zaharraren azken garaian. Beriain eta Elizalde nafarrek, zein Otxoa Arin, Irazusta eta Zegamako dotrinaren egile gipuzkoarrek, <tc>, <tç>, <tz> eta <ts> grafemak erabiltzen dituzte han-hemenka: *eracutsi dazaguzu* El 30, *itza* El 35; *heriotce* Ber *Doc* 107v, *biotzac* Ber *Doc* 93v, *viotçes* Ber *Doc* 93v, *eracutsiric* Ber *Doc* 106v; *etsaya* Iraz 2, *utci* Iraz 24, *eriotzaco* Iraz 4; *juzgatcera* Zeg 16, *viotz* Zeg 21; *bacoitza* OA 43, *atseguin* OA 157. Sabaiaurrekoari dagokionez, frikaria <x> eta afrikatua <ch> grafemen bidez adierazten dira maizenik Euskara Zaharraren hastapenean berean: *elexan* Arz 32, *ichi* Arz 24; *goxetaraco* Mik 14r, *guichiago* Mik 13v; *exilic* Kap 96, *derecho* Kap 72.

---

18. XVII. mende osoan, testu solteetan eta euskara hainbeste landu ez zuten autoreen idatzietan bizkarkari frikari eta afrikatuen arteko bereizketa grafikorik ez da egiten; Voltoire, Dasantza, eta Etxeberri Dorreren idatzietan, adibidez.

### *3.1.4. Grafia etimologikoa*

Azkenik, euskara jaso eta landuak ekarritako grafia berezi zenbait aipatu nahi genituzke. Lapurtera klasikoaren garai honetan, autoreek grafia etimologikoa hobesteko joera dute, bai erdarei mailegaturiko hitzetan, baita euskal jatorrizkoetan ere.

Hizkuntza emailearen grafia mantentzen duten hitzak ugari dira garai honetan. Idazlanetan zehar, greko eta latinetiko hitzak beren jatorrizko grafemekin agertzen dira; adibidez, grekoaren <y>, <hie->, <ph>, <th>, <ch> agertzen dira, gaur egungo euskaraz <i>, <(h)ie>, <f>, <p>, <t>, <k> gisa irudikatuko genituzkeenak, edo latinaren <bb>, <dd>, <gg>, <pp>, <tt>, <ff>, <cc>, <qu>$^{a,e}$, <ll>, <mm>, <nn>, <ti>$^{a,o}$ gaur egungo euskaldunek <b>, <d>, <g>, <p>, <t>, <f>, <k>, <l>, <m>, <n>, <z> grafemekin idatziko genituzkeenak.

Halere, erran behar dugu idazle guztiek ez dutela jokabide bera maileguen aurrean. Mujikak (2002: 246-247) hiru joera desberdin ikusten ditu Euskara Zaharreko Iparraldeko autoreen artean. Lehenik, Etxeberri Ziburukoa, Tartas eta Gazteluzarrek, Leizarragaren gisara, maileguak beren jatorrizko grafian idazteko joera tinkoa erakusten dute; Pouvreau, Aranbillaga eta Oloroeko katexima haien bidetik lihoazke. Beste muturrean, Oihenart eta Urte ditugu, normalean jatorrizko grafiak baztertzen dituztenak. Gainerakoak idazkera fonologikora hurbiltzen dira, nahiz eta frankotan grafia etimologikoak isurtzen zaizkien: Materre, Axular, Harizmendi, Argainaratz, Etxeberri Sarakoa, Xurio. Bestela erranik, bilakabidea zuzena ez bada ere, erran genezake garai honetan idazkera etimologikoa urrituz doala eta fonologikoaren aldeko joera nagusituz (Mujika 2002: 244-252).

Euskal jatorriko hitzei dagokienez, garai honetakoak dira hitzen osaera eta jatorria erakusteko helburua duten grafia etimologikoak. Leizarragari jarraikiz, lapurtera klasikoko idazleek elkartu eta eratorrietan unitate bakoitzaren grafia aldatu gabe uzten dute, aldaketa morfonologikoei kasu egin gabe: *hitzcuntça* (Mat ix), *aberatsten* (Ax 161), *ebatsle* (EZ *Man* I, 87); *debotqui* (Mat 135), *aussartqui* (EZ *Man* I, 89), *berantcor* (Ax 211). Zuberoako autore zenbaitek ere joera etimologikozalea erakusten dute (Mujika 2002: 213-216): *bekhaitzteria* (Bp I, 54), *pphitztuda* (*CatOlo* 17).

### **3.2. Fonologia**

Atal honetan, Euskara Zaharraren sistema fonologikoaren bereizgarri direnak baizik ez ditugu aipatuko. Gisa horretan, gure arreta bokaletan (§ 3.2.1) eta txistukarietan (§ 3.2.2) finkatuko dugu.

### *3.2.1. Bokalak*

Bokalei dagokienez, lehenik, bokal luzeak aztertuko ditugu (§ 3.2.1.1) eta, ondotik, bokal batugabeak (§ 3.2.1.2) eta bokal sudurkariak (§ 3.2.1.3).

### 3.2.1.1. Bokal luzeak

Euskararen garairik zaharrenetan, bokal luzeak —edo bikoitzak, bietara interpreta baitaitezke— lexemetan, flexioan zein elkartu-eratorrietan biltzen dira. Ikusiko dugun bezala, haien jatorria edozein izanik, mendebaldeko hizkerek dituzte hobekien mantendu.

Lehenik, hasperena galdu duten hizkeretan, bokal arteko hasperenaren erorketak bokal luzeak utzi ditu lexemetan. Aztergai dugun garaian, lexemetako bokal luze horiek bizirik dira bizkaieraren sortaldeko hizkeretan, Amilleta edo Kapanagaren dotrinak lekuko: *leenagoco* (Am 4), *zaarrac* (Am 6); *leelengo* (Kap 8), *beera* (Kap 93). Halere, azken autore honen *beera* (Kap 93) / *bera* (Kap 99), *fin baacoa* (Kap 115) / *finbacoa* (Kap 30) txandaketek, eta *lar* (Kap 113), *çar* (Kap 107) aldaerek erakusten dute bokal horiek bakuntzen hasiak direla. Sartaldean, berriz, bokal luzeen bakuntze prozesua aurreko garaian abiatu zen (cf. *RS zaarra* 399, 479 baina *zarra* 415; *ollaarra* 292, baina *ollar* 77), eta badirudi 1600etik aurrera indartu zela: *Bertso Bizkaitarr*etan *leen* (*BB* 1d) formaren ondoan *zar* (*BB* 6f) biltzen da, eta Mikoletak ez du haien arrastorik uzten: *lelengoa* (Mik 12r), *sar* 'zahar' (Mik 15r).[19] Goi-nafarrerazko autoreen artean, Beriainek *leen* (105v) erabiltzen badu ere, Elizaldek eta 1729ko sermoiaren egileak bokal bakunduak baizik ez dituzte idazten: *lembecicoa* (El 31), *len* (El 37), *zarrago* (El 41), *lenago* (*GNSerm* 3). Gipuzkeraz ere han-hemenka biltzen dira bokal bikoitzak lexemetan: *leen* (Iraz 2), *maats ardoa* (OA 45).

Flexioak eraginiko bokal luzeei dagokienez, deklinabidean, *a* bokalaz bukatzen diren hitzei inesibo singularreko (*-an*), edo absolutibo eta ergatibo pluraleko (*-ak*) atzizkiak gehitzean, *aak* edo *-aan* bukaerak ager daitezke. Aztergai dugun garaian,[20] bokal luze horiek bizkaierazko testuetan baizik ez dira agertzen, hala nola *Bertso Bizkaitarr*etan *balaac* (*BB* 14d); Amilleta eta Kapanagaren dotrinetan *prophetaac* (Am 2), *verbaac* (Am 3), *sepulturaan* (Am 5), *santaan* (Am 1), *arimaac* (Kap 11), *alabanzaan* (Kap 39), edo *Viva Jesus* testuan *obraac* (*VJ* 2), *gauzaac* (*VJ* 4), *elexaan* (*VJ* 3), *celaan* (*VJ* 4).[21] Aldiz, goi-nafarreraz, gipuzkeraz, lapurteraz, behe-nafarreraz eta zubereraz *-ak* eta *-an*, hots, bokala bakundurik duten bukaerak baizik ez dira lekukotzen: *arimac* (Ber *Doc* 109v), *faltac* (*GNSerm* 1), *penac* (El 54), *personac* (Iraz 15), *pobrezan* (*GNSerm* 2), *elizan* (*GNSerm* 5), *ariman* (El 52), Otxoa Arinen *faltaac* (OA 101) salbuespena izan ezik.

---

19. *Loo* (12r) iluna izan ezik.

20. Bokal luze horiek gaur egun arte iraun dute pluralean, sortaldeko bizkaieraren (Oñati) eta gipuzkeraren zenbait aldaeratan (Zumaia, Zegama eta Legazpi) (Hualde & Gaminde 1998).

21. Bizkaierazko testu batzuek bokala beti bakundurik agertzen dute; adibidez, *Egiaren kanta*: *alabançac* (*EgiaK* 15), *alcandorac* (*EgiaK* 161), *gilçac* (*EgiaK* 177).

Halaber, *e* bokalaz bukatzen diren izen edo aditzei *e* bokalaz hasten diren atzizkiak gehitzean *ee* bokal luzea sortzen da mendebaldeko hizkera zaharretan, sartaldeko Mikoletaren testuan izan ezik:[22] *excelenteena* (Am 4), *dacuseela* 'dakusatela' (Am 5), *ebeenac* 'zutenak' (Am 5), *daudeena* 'dutena' (*VJ* 7), *jateena* 'zaiena' (*VJ* 10), *ateetara* (Kap 109), baina *gausena* (Mik 12r), *gausetaric* (Mik 12v), *atetan* (Mik 12v). Egile nafar eta lapurtar askoren lanetan, bokal bakunduak eta bikoitzak dituzten aldaerak elkarren ondoan ikusten dira: Elizaldek *andrequi* (El 48), *genden* (El 52), *fraiden* (El 63), *ezin dezaquenac* (El 49) baina *virtuteen* (El 62), *semeequi* (El 48) dakartza; Etxeberri Ziburukoak *dolorec* (EZ *Man* II, 98), *bercéc* (EZ *Man* II, 70), *letorquen* (EZ *Man* II, 113) baina *abreec* (EZ *Man* II, 193), *nequeez* (EZ *Man* II, 131), *daitezqueen* (EZ *Man* I, 79); Axularrek *vmec* (Ax 258), *semen* (Ax 211), *abréc* (Ax 432), *bertcéc* (Ax 436), baina *probeen* (Ax 241), *bertceen* (Ax 101); Etxeberri Sarakoak *genden* (ES 39), *emaztequin* (ES 25), *ceçaquen* (ES 21) baina *semeec* (ES 39), *eguilleen* (ES 23), *citequeen* (ES 26). Nafar (Beriain), lapurtar (Harizmendi) eta zuberotar (Belapeire, Oloroeko katexima) batzuek, berriz, *e* bakuna agertzen dute beti: *emazten* (Ber *Doc* 85r), *predicaçallec* (Ber *Doc* 113v), *dezaquela* (Ber *Doc* 101r). Iduri luke gipuzkera zaharrean *ee* bokal bikoitza hobeki mantentzen dela: *besteen* (Iraz 20), *excelenteena* (Iraz 14), *admirableena* (Iraz 14), *dabeela* (OA 16).

Azkenik, mendebadeko hizkeretan, badira bokal luze batzuk ez baitakigu nondik sortuak diren (hasperenaren erorketa, elkarketa…): *laarregui* (Kap 101), *iaatecoa* (Kap 99), *liçaateque* (Am 4), *jaaco* 'zaio' (Am 4), *zaatean* 'zatekeen' (Am 4), *daatean* 'datekeen' (Am 4).

#### 3.2.1.2. Bokal batugabeak

Euskara Zaharrean, eratorpenean edo deklinabidean elkartutako *a* eta *e* bokalak aldatu gabe agertzen dira Mendebaldeko hizkeretan, hala nola Zubiaren idatzietan eta *Bertso Bizkaitarr*etan: *apartaetea* (Zub 150), *parcaetaraco* (Zub 217), *fundaetan* (*BB* 6b), *disparaetan* (*BB* 11c). Bizkitartean, mintzo hauetan ere bokal talde horren aldaketa bidean da, eta *e* bilakaturik ager daiteke, edo gutxienez *ee* bihurturik, *ae* > *e* bilakabidearen tarteko urratsa litzatekeena: *Egiaren kanta*k *armaen indarragaz* (*EgiaK* 80), *aen artean* (*EgiaK* 124) baina *farfulleteco* (*EgiaK* 49), *acordetaco* (*EgiaK* 200) agertzen ditu; Amilletak *guiçonaen* 'gizonen' (Am 5), *arceen dau* 'hartzen du' (Am 5); *Viva Jesus* dotrinak *confessaetaco* (*VJ* 10), *adoraetan* (*VJ* 11), *amaetan* (*VJ* 12) baina *confesseetan* (*VJ* 10), *adoreetan* (*VJ* 11), *ameetan* (*VJ* 15) eta *participetan* (*VJ* 8); Kapanagaren dotrinak *amaetea* (Kap 8), *obraetan* (Kap 24), *perssonaetan* (Kap 27) baina *gozeetaco* (Kap 23),

22. Bestalde, *ae* > *ee* bilakabidearen ondorio diren zenbait bokal luze ere badago: *profeteetan* (Kap 22), *gauçeetan* (Kap 107), *quentceen* (OA 39), *sartceen* (OA 153). Horiek § 3.2.1.2 atalean berriz aipatuko ditugu.

*esqueetan* (Kap 24), *aiteen* 'aitaren' (Kap 33) eta *señalen* (Kap 21), *glorien* (Kap 28). Mikoletaren testuan, bat izan ezik (*gorraensaco* 12v), *ae* guztiak bilduak dira (*gausetaric* 12v, *despachetan* 13r, *ossasunensaco* 13r). Horrek erakusten digu horretan ere sartaldeko bizkaiera berritzailea izan dela (ik. bokal bikoitzak § 3.2.1.1).

Erdialde eta ekialde zabalean, aldaketa lehenago gertatu zen. Iparralde osoan, *ae* > *e* aldaketa lehen testuetarako burutua zen. Halere, aurreko egoeraren arrastoak izan daitezkeen é azentudunak eta *ee* biltzen dira Axularren *Gero*n: *guerléc* (Ax 50), *obrèc* (Ax 17), *berèc* (Ax 19), *ameen* (Ax 24), *bereec* (Ax 236) (Mujika 2002: 229). Goi-nafarrerari dagokionez, *e* nagusiaren ondoan —*gaucetan* (El 59), *entrañetan* (*GNSerm* 4), *penetara* (Ber *Doc* 99r)— *ae* bilkuraren arrasto bana biltzen da Elizalderen dotrinan eta 1729ko sermoian: *bienventuranzaen* (El 62), *honrraetan* (*GNSerm* 2).

#### 3.2.1.3. Bokal sudurkariak

Bokal sudurkarien gaia zaila da, gehienetan grafikoki markatu gabe daudelako, dela egileen, dela inprimategien erruz. Adibidez, zubereraz, gaur egun arte iraun duten bokal horiek XVIII. mendearen bigarren partean baizik ez ziren lehen aldikotz grafikoki adierazi, J. Philippe Belaren hiztegian, hain zuzen.

Madariaga eta Garibairen oharrei esker, badakigu XVI. mendeko bizkaierak bazituela (ik. aurreko kapitulua, § 3.2.1.3). Ondoko mendean, Kapanagaren testuan bokal txapeldunak biltzen dira han-hemenka (*erraçoâ*, *doêac*, *coroêa*), nahiz eta hitz berak txapelik gabe ere inprimatu ziren (*erraçoara*, *doea*, *coroea*). Alabaina, datuak falta ditugu aztergai dugun garaian bokal sudurkariak zer hizkeratan bizirik zeuden esan ahal izateko. Beranduagoko lekukotasunei esker ondoriozta dezakegu zubereraz eta erronkarieraz bizirik zeudela, baina ezinezkoa zaigu gipuzkerak, lapurterak, behe-nafarrerak edo zaraitzuerak mantendu zituzten esatea. Zer esanik ez, ez da ziurra Kapanagaren ekialdeko aldaeraz gain, bizkaiera zaharraren gainerako hizkeretan erabiltzen zirenez.

### *3.2.2. Kontsonanteak*

#### 3.2.2.1. Txistukariak: frikariak eta afrikatuak

Euskara Arkaikoan, txistukari frikari eta afrikatuak grafikoki bereizten dituzten autoreek (Leizarraga, Landucci) frikaria islatzen dute ozenen ondoan eta, gisa horretan, testuinguru horretan frikariaren alde neutralizatzeko joeraren berri ematen.

Aztergai dugun garaian, joera hori aldatuz joan zen; gutxienez, hori erakusten digute txistukari frikari eta afrikatuak grafikoki bereizten dituzten Iparraldeko testuek. Halere, denek ez dute berdin jokatzen, eta hiru multzotan antola daitezke erakusten duten joeraren arabera (Mujika 2002).

Lehenik, baxebanartarrek, zuberotarrek eta Aranbillaga arteko lapurtarrek (Etxeberri Ziburukoa, Axular eta Pouvreau izan ezik) frikaria idatzi ohi dute *n* eta *l* ondoan, eta *r* ondoan frikaria zein afrikatua. Eratorpenean ere haietarik anitzek frikari bihurtzen dute afrikatua: *hitzcunça* (Hm 9), *eskencen* (Bp I, 76), *galceaz* (Arg 7), *ethorcen* (Hm 30). Etxeberri Ziburukoa, Axular eta Pouvreauk ekartzen dute bigarren joera. Haiek *r* eta *l* ondoan frikaria zein afrikatua erabiltzen dute, eta *n* ondoan nagusiki afrikatua: *ventçutu* (EZ *Man* I, 59) —Axularrek afrikatua nagusiagoa du *l* ondotik ere—. Halere, afrikatuz hasiriko atzizkia aldatu gabe gelditzen da: *iracurtçailleari* (Ax 15), *alfertçat* (Ax 32). Hirugarrenik, Aranbillagagandik aurrera, afrikatua da nagusi *n*, *l* zein *r* ondoan. Eratorpenean ere afrikatuak ez du aldaketarik nozitzen *n*, *l* edo *r* ondotik agertzen dela. Maileguei dagokienez, oro har Aranbillaga arte, frikaria da nagusi ozen ondoan. Izan ere, azken idazle horren lanetik aurrera, lapurtarrek maileguetan ere ozen ondoko frikaria afrikatu bihurtzeko joera dute (Mujika 2002: 216-222): *confiantça* (Gz 56), *esperantça* (ES 38), *contsideratuco* (Urt I, 196).

Azkenean, hiru multzo horiek bilakabidearen urrats desberdinak marrazten laguntzen dute. Hasiera batean, frikariaren aldeko neutralizazioa erabatekoa genuen *n* eta *l* ondoan (Euskara Arkaikoa eta Euskara Zaharreko lehen multzoa) eta, azken garaian, afrikatuaren aldeko neutralizazioa hiru ozenen ondoan. Etxeberri Ziburukoa, Axular eta Pouvreauk erakusten duten joera garapen horren tarteko egoera litzateke, zeinetan afrikatuaren aldeko neutralizazioa ez zen oraino denetara orokortua.

Hegoaldeko euskalkiek XVIII. mendearen bigarren erdira arte frikarien eta afrikatuen grafiak sistematikoki bereizi ez zituzten neurrian, ezin dugu ziurtasunez erran ozenen ondoan frikaria mantendu zuten ala ez.

#### 3.2.2.2. Txistukariak: bizkarkariak eta apikariak

Gaur egun, mendebaldeko hizkerek txistukari bizkarkari eta apikarien arteko oposaketa erabat galdua dute, apikariaren alde frikarietan eta bizkarkariaren alde afrikatuetan. Frikarietan gertatu neutralizazioaren lehen zantzuak gehienbat Bilbokotzat edo inguruetakotzat daukagun *Refranes y Sentencias* (1596) izeneko errefrau bilduman aurkitzen ditugu, testuinguru ahulenetan, erran nahi baita herskari aurrean eta hitz bukaeran (ik. aurreko kapitulua, § 3.2.2.3).

Euskara Zaharrean, aldaketa areagotu zen sartaldeko bizkaieraz. *Bertso Bizkaitarrak* eta *Viva Jesus* testuetan delako neutralizazioa testuinguru guztietan —hots, hitz hasieran, kontsonante aurrean, hitz bukaeran, bokal artean— agertzen da, nahiz eta ez den erabatekoa: *senduen* (*BB* 24c), *situcen* (*VJ* 2), *segaitic* (*VJ* 16), *ecin hil siitequean* (*VJ* 6), *senguisen* (*VJ* 7), *sidin* (*VJ* 5, 6); *noisbait* (*BB* 5c), *gustian* (*BB* 6d), *esta* (*BB* 20e), *espada*

(*BB* 20g), *asquero* (*VJ* 2) —baina *azquero* (*VJ* 4)—, *zaspi* (*VJ* 4), *emasteric* (*VJ* 13); *es* (*BB* 3d), *legues* (*VJ* 2) —baina *leguez* (*VJ* 6)—, *señaleagas* (*VJ* 2), *gagos* (*VJ* 8), *libredu gaguizus* (*VJ* 3, 14); *espadosu* (*BB* 10g), *jaunac disula* (*BB* 38g), *gause* 'gauza' (*VJ* 7), *esin* 'ezin' (*VJ* 9). Mikoleta bilbotarra dugu garai hartan neutralizazioa bururaino eramana zuen bakarra: salbuespen bat edo beste izan ezik —*errazoegaz* (Mik 13v), *leguez* (Mik 13v), *guiça cume* (Mik 14v), *vrgazi* (Mik 14r)—, frikarietan apikaria denetara orokortua du, edo bizkarkaria galdua: *eguissu* (Mik 14v), *ysara bi* (Mik 14v), *sar* (Mik 15r), *dustia* (Mik 15r), *dagos* (Mik 15r), *selan* (Mik 15r). Kapanaga eta *Egiaren kanta* lekuko, sortaldeko bizkaieraz oposaketa oraindik tinko zen Euskara Zaharrean. Salbuespen bakarrak herskari aurrean aurkitzen ditugu, eta ez dira batere sistematikoak: *gustia* (*EgiaK* 2), *bespera* (*EgiaK* 192), *gasteac* (*EgiaK* 206); *gustietan* (Kap 35), *estireanac* (Kap 65).

Lapurtera (Materre, Axular, Harizmendi, Etxeberri Sarakoa, Urte, Pouvreau) eta zuberera klasikoko (Belapeire, Zalgize, Oloroeko katexima) idatzietan ere usu apikaria islatzen da bizkarkariaren ordez kontsonante aurrean (*gaste*, *dituste*) eta hitz bukaeran (*nois*). Gertakari hori aise urriagoa da afrikatuetan: *heriotseco* (Ax 207), errakuntza ez bada behintzat, edo *bihots* (Oih *Po* IX, 26) (Mujika 2002: 197, 209). Ez da argi txandaketa horiek apikariaren aldeko neutralizaziorik salatzen ote duten; izan ere, gogoan izan behar da idazle horiek oro frantses ortografia sistema daukatela eredutzat, eta horretan <s> grafema erabiltzen dela bizkarkaria adierazteko. Gainera, frantsesez —inguruko erromantzeetan bezala— <z> grafema oso urria da silaba eta hitz bukaeretan, eta <s>, berriz, oso ugaria. Bestela erranik, ezin dugu baztertu txandaketa horien oinarrian arazo grafiko hutsa izatea.

Goi-nafarreraz neutralizazio kasuak oso bakanak dira, eta denak kontsonante aurrean. Elizalde, Beriain eta 1729ko sermoian bildu ditugu adibide batzuk: *emaste* (El 30), *estaquienari* (El 32) *gaituste* (El 52); *eguiten tustela* (*GNSerm* 4); *citustenes* (Ber *Doc* 123r), *yçandu citusten* (Ber *Doc* 123r), *oneristen* (Ber *Doc* 142), *ditustenac* (Ber *Doc* 166r) baina *dituztenac* (Ber *Doc* 93v).

Azkenik, Mikoleta bilbotarraren testuan baizik ez ditugu aurkitu afrikatu bizkarkari eta apikariaren arteko neutralizazioaren lehen zantzuak. Izan ere, nahiz eta normalean afrikatu apikaria <s> eta <ss>, eta afrikatu bizkarkaria <z> grafemen bidez aurkeztu, han-hemenka, etimologikoki bizkarkariak diren afrikatuak apikariari dagozkion grafemekin adierazten dira: *osic* (Mik 12r), *oss* (Mik 12v), *basuc* (Mik 14r), *bisuc* (Mik 15r). Gaur egungo mendebaldeko hizkeretan neutralizazioa afrikatu bizkarkariaren alde burutua denez, galda genezake Mikoletaren grafia bitxi hauek ez ote zaizkion hiperzuzenketari egotzi behar. Dena den, afrikatuen historia oraindik ikertzeke dago.

## 3.3. Izenaren morfologia

### *3.3.1. Artikulua*

Euskara Arkaikoan euskalki guztiek hiru artikulu erabiltzen dituzte singularrean, *-au* (*-or*), *-ori* eta *-a* hain zuzen, *hau(r)*, *hori*, **har* hiru graduetako erakusleen gramatikalizazioaren ondorioz sortuak. Pluralean, berriz, erakusle pluraletatik eratorritakoak ditugu: *-ok* lehen eta bigarren graduetarako, eta *-ak* hirugarrenerako.

Euskara Zaharrean artikulu horien guztien erabilera mendebaldeko hizkeretan mantendu da hobekien; esate baterako, Mikoleta eta Kapanagaren testuetan: *ardi seme ori* (Mik 12r), *bissarrau* (Mik 12v), *urau* (Mik 12v), *sure meçedeori* (Mik 12v), *çuri ayta espiritualorri* (Kap 20), *gueure buruau* (Kap 23), *examinaau* (Kap 89); *pinturoc* (Mik 13r), *erretratuoc* (Mik 13r), *trastuoc* (Mik 14r), *desterraduoc* (Kap 7), *veguioc* (Kap 7). Goi-nafarreraz ere lehen graduko erakusletik eratorritako artikulua aurkitzen dugu 1729ko sermoian[23] eta Beriainen dotrinan —nahiz eta azken honetan gutxiago—: *au guciau* (*GNSerm* 6), *neure maldicioau* (*GNSerm* 7), *argui dezala ene entendamentuau Espiritu Sanduac* (*GNSerm* 1), *arla dacazquit bi seme manazazun jarri daitezela batau escuilco aaldean, eta berceau ezquerrecoan zure erreinuan* (*GNSerm* 2), *ni becatariau confessaçen nayçayo Iaungoyco gucis poderosoari* (Ber *Doc* 95r), *diru hau gucihau* (Ber *Doc* 108r). Pluraleko formak arraroagoak dira; Beriainek *gu gucioc* (Ber *Doc* 111) eta Elizaldek *Evaren seme desterratuoc* (El 40) dakartzate.

Erdialde eta ekialdean, berriz, ordurako *-a* artikulua nagusitu da, eta lehen eta bigarren graduetako erakusleetatik eratorri artikuluak gramatika-formetan baizik ez dira gordetzen, fosilizaturik bezala (Urgell 2006a, Camino 2008): *horioc* (EZ *Man* I, 88), *gueuroc* (EZ *Man* I, 122), *haur guztior* (Ax 156) eta *haur beror* (Ax 38).

Edozein artikulu erabiltzen dela, Euskara Zaharrean oraindik mugatuak dira haren erabilera-esparruak. Adibidez, atributua (1-8) eta objektua (9) frankotan mugagabean agertzen dira euskalki guztietan.[24]

(1) **Guizon** zan partez (Kap 10)
(2) **Arerio** çana (Kap 87)
(3) **Castu** eta **garbi** danac (Kap 50)
(4) Persona iru oneetaric **zaarrago** da bata besteac bano (*VJ* 5)

---

23. 1729ko sermoian, artikulua denean, *au* forma hartzen du, baina, erakuslea denean, *gau* forma: *debocio gau* (*GNSerm* 4), *privilegiogau* (*GNSerm* 4), *predicugau* (*GNSerm* 8), *exemplogau* (*GNSerm* 8), *mundu gontan* (*GNSerm* 4).

24. Ekialdeko hizkeretan, artikuluaren erabilera oraindik ere mugatua da zenbait testuingurutan (atribuzioan, izen zenbakaitzetan, osagarri zuzenean, perpaus existentzialetan…).

(5) **Gomendadore** çara, jaun done Acubeco, / curuce gorriagaz bular[r]etaraco: / çu leguez curuceau mereciduric / Hespañan ez dago çaldun biciric (*EgiaK* 135-138)
(6) Contricioaren damua **nobleago**, edo **finago** da, atricioarena baño? (El 53)
(7) Gularen contra iatean, eta edatean **templatu** yçatea (Ber *Doc* 91r)
(8) Cein çaldi da **on** edo **hobe ago**? (Ax 38)
(9) **Conseju** emon (Kap 13)

### *3.3.2. Izenordainak*

Euskara Zaharreko izenordainak aurreko garaikoen oso antzekoak dira: *ni*, *(h)i*, *gu*, *zu*, *zuek* paradigma dute arruntek, eta *neu* / *neroni* / *nihaur*, *(h)eu* / *heroni* / *hihaur*, *geu* / *geroni* / *guhaur*, *zeu* / *zeroni* / *zuhaur*, *zeuek* / *zuhaurek* indartuek. Gainera, orduan bezala, indartuen forma zaharrenaren arrastoak biltzen dira han-hemenka, absolutibo eta ergatiboan. Axularrek *neur* dakar (< **ni-haur*), eta Azpeitiko gutunek, Materrek eta Axularrek *ceurc* (< **zu-haur+k*).

Izatekotan, aldaketak genitibozko forma indartuetan gertatu dira. Euskalki gehienen *neure*, *heure*, *geure*, *zeure*, *zeuren* formen ondoan, goi-nafarrera (Ber, El) eta gipuzkera (Iraz, OA, Zeg) zaharrek *nere*, *gere(n)* edota *zere* forma monoptongatuak dituzte, eta zuberera zaharrak *nure* (Oih), *ore* (Tt, Bp) bezalakoak.

### *3.3.3. Deklinabidea*

Atal honetan, Euskara Zaharrean aldaketak izan dituzten postposizioak baizik ez ditugu aipatuko, zehazkiago, genitiboa eta ablatiboa.

#### 3.3.3.1. Genitiboa

Lehenbiziko testuetatik, erdialde eta ekialdeko hizkerek beren genitiboa *-aren* (sg) eta *-en* (pl) atzizkien bidez egiten dute.

Mendebaldeko testu zaharretan, berriz, ez da bereizketa morfologikorik singularraren eta pluralaren artean. Bizkaiera zaharrean, oro har *-en* aurkitzen dugu singular eta pluralean: *uren* 'uraren' (Mik 14v), *proximoen* 'proximoaren' (Kap 8), *Iesu christoen gorpuce* 'Jesukristoren gorputza' (*VJ* 10), *chacurren oguia* 'txakurren ogia' (*EgiaK* 53). Halere, forma honetaz gain, testu zenbaitetan (*VJ*, Kap, Am) *-een* forma, *-aen* > *-een* > *-en* bilakabidearen tarteko urratsa dena, erabiltzen da bietarako (ik. gorago § 3.2.1.1): *spiritu santu iauneen* 'Espiritu Santu jaunaren' (Kap 10), *ileen artetic* 'hilen artetik' (Am 5), *ceruen da lurreen criedoreagan* 'zeruaren eta lurraren Kriadoreagan' (*VJ* 8). Ohar gaitezen *-aren* singularreko aldaera ez zaiela guztiz ezezaguna, aurreko garaian lekukotzen

baita (*RS*, Lazarraga), eta Euskara Zaharrean Kapanaga eta Amilletaren testuetan bildu baitugu: *justiçiaren* (Kap 19), *santissimoaren* (Am 1). Azkenik, gutxi bada ere, Amilletak *-aen* forma arkaikoa erabiltzen du: *guiçonaen sepulturaan enterradu* (Am 5).

#### 3.3.3.2. Ablatiboa

Euskara Zaharrean ablatiboa *-(r)ik*, *-ti(k)*, *-rean*, *-reanik*, eta *-tarik*, *-tarean* formen bidez adierazten da singularrean eta pluralean, hurrenez hurren, euskalki eta azpigaraien arabera.

Mendebaldean, aztergai dugun garaian gertatu da ablatiboaren berrantolaketa. xvi. eta xvii. mendeetako testuetan, *-rean* eta *-(r)ik* banaketa osagarrian erabiltzen dira: *-rean* nagusi da, haren erabilera-mugak bizidunak, leku-izen bereziak eta denbora adierazten duten sintagmak izanik. Hauetan *-(r)ik* erabiltzen da: *hordiaganic ençindu çeeguic arean* (*RS* 536), *oneric aurrera* (Zumarragaren gutuna), *ez urrun Maloguenic* (*Arrasateko erreketa*).

1700 arte, *-rean* forma emankorra izanik ere, *-(r)ik* hedatuz doa. Horren lekuko dugu *-reanik* pleonasmoaren sorrera. Azken forma hau erabiltzen duten testu gehienetan (*Egiaren kanta*, Mikoleta, Kapanaga, Barrutia) gutxiengoan da *-rean* aldaeraren ondoan, baina forma nagusia da Zubia-Lezamizen dotrinan (1691-99). xviii. mendearen lehen erdirako, bi forma hauek zaharkituak dira. Arzadunen dotrinaren bigarren argitalpenekoa da *-rean* formaren azken agerraldia, hots, 1758koa. Aldiz, *-reanik* morfemaren azken agerraldia 1858an Bonapartek argitaratu Laudioko dotrinakoa da.

Gainera, mendebaldeko Euskara Arkaikoan, *-rean*, *-(r)ik* eta *-reanik* ablatibozko formen ondoan, *-ti* erabiltzen zen prosekutiboa adierazteko ('non zehar'). Euskara Zaharraren hastapenean, *-ti* aipatutako balioarekin agertzen da Mikoleta, Kapanaga eta *Bertso Bizkaitarr*etan. Ondoko hamarkadetan, *-rean* desagertzearekin batera, *-(r)ik* ablatiboa eta *ti(k)* prosekutiboa nahasiz joan ziren, eta *-ti(k)* ablatiboa agertu zen. Nahiz eta, aurreko kapituluan adierazi bezala (ik. 5. kap., § 3.3.3.2), *-tik* ablatiboaren lehen lekukotasuna Lazarragaren eskuizkribuko Sasiolakoaren testukoa den, Urkizuren (1737) erroxariotik aurrera —hark *-ti* erabiltzen du, baina *-(r)ik* baino maiztasun apalagoarekin— haren erabilera hedatu zen eta ablatibozko forma nagusia bihurtu zen mendebaldeko hizkeretan; esaterako, Barrutiak singularreko ablatiboen erdiak *-ti*-ren bidez egiten ditu, eta baditu 4 *-reanik* eta 8 *gainik*.

Ekialde eta erdialdean, Euskara Arkaikoaz geroztik, *-ti(k)* da nagusi eta *-(r)ik* oso ihartua (ik. aurreko kapitulua, § 3.3.3.2). Gaur egun, *-(r)ik* zubereraz baizik ez da erabiltzen, leku-izenekin: *Maulerik*.

Pluraleko ablatiboari dagokionez, lehen testuetatik *-tarik* da nagusi euskalki guztietan. Mendebaldean *-tarean* ere aurkitzen da, bizkitartean, bakanki (Kapanaga,

Zubia-Lezamiz, *Viva Jesus*). Azkenean, gaur egun erdialde eta mendebaldean hedatua den *-tati(k)* aldaera berantiarra da. Haren lehenbiziko lekukotasunetarik bat Barrutiaren antzerkian bildu dugu (*Xaun onen eskuetati*, 104).

### 3.4. Aditza

Atal hau Euskara Zaharraren aditzari eskainia da. Aditz jokatugabeek izandako aldaketak aipatu ondoan (§ 3.4.1), aditz jokatuen paradigmen zenbait berezitasun aurkeztuko dugu (§ 3.4.2). Azkenik, denbora, aspektua eta moduaren adierazpideen deskribapena eskainiko dugu (§ 3.4.3).

#### *3.4.1. Aditz jokatugabeak*

Euskara Zaharrean zehar zenbait aldaketa ikusten dugu aditz jokatugabeen forma eta banaketari dagokienez.

Lehenik, aditzoinaren erabilera desagertuz doa mendebaldeko hizkeretan, eta emeki-emeki murriztuz erdialdekoetan (Mounole 2007). xvii. mendean partizipioa **edin* laguntzailearen aditz nagusi ohikoena da bizkaieraz eta araberaz *galdu didin* Kap 153, *xarribidi mapuruan* Mik 13v, baina *alcança daquion* Kap 100, *gueldisate* Mik 14r), eta xviii. mendean aditzoina osoki ordezkatua du egitura horretan (*santificadu dila* Arz 33, *animau gaitezan* Urk 57).[25] **Ezan* laguntzailearekiko egituran, berriz, aditzoina dugu nagusi, xviii. mendean [partizipioa + *egin*] perifrasiak osoki ordezkatu zuen arte (ik. beherago § 3.4.3): *arreçaçu* (Kap 153), *libra gaiçaçu* (Am 2). Gipuzkeraz, nahiz eta partizipioa hedatuz doan, xvii zein xviii. mendeetako testuetan aditzoina oraino nagusi da **edin* eta **ezan* laguntzaileekiko egituretan: *goza dezagun* (Iraz 2), *aparta zaitez* (Iraz 2).

Alderantziz, ekialdeko hizkeretan aditzoina bizi-bizirik da, hainbeste non aditz jokatugabe batzuen *-ki* atzizkiko *i* bokala partizipio-marka gisa berranalizatu den. Euskara Zaharrean sorturikoak dira *atxek* 'atxik' (Etxt), *idek* 'irek' (He, Xu), *jarraik* (He, Xu, Bp) gisa eraturiko aditzoinak. Euskara Arkaikoan hasitako joera bati jarraikiz (ik. aurreko kapitulua, § 3.4.1), *t*-dun aditzoinak ere aurkitzen ditugu: *hant* (EZ, SP), *lot* (Ax, EZ, Mat), *orhit* (Bp, Tt) / *orhoit* (Arbill, Arg, Ax, ES, EZ, Gz, Harb, He, Hm, Mat, SP, Urt, Xu) / *oroit* (Ber, El); halaber, lapurterazko idazle batzuk *-t*-z amaituriko aditzoin berriak erabiltzen hasten dira: *hart* (Arbill, SP), *lagunt* (Arbill), *sart* (Arbill), *sort* (SP), *urt(h)* (Arbill, Gz, SP, Xu).

Bestalde, berrikuntzak ikusten ditugu partizipioen formetan. Euskara Arkaikoan *-tu* marka *-i* morfemaz bukaturiko partizipioei hedatzen bazitzaien (*ancitu* Laz, *haritu*

---

25. Barrutia aditzoina erabiltzen duen xviii. mendeko Mendebaldeko autore bakarra da (Mounole 2007).

Etxp), garai honetan *-n*-z bukaturikoetara ere zabaltzen zaie goi-nafarrera, gipuzkera eta lapurteraz: *egondu* (Ber), *egotu* (Ax, Xu, EZ, Gz, Harb, He, Mat, Urt), *izandu* (Ber, Iraz, OA), *izatu* (Ax, Xu, EZ, ES, Gz, Harb, He, Mat, Urt).

Aditz-izena da ezbairik gabe Euskara Zaharrean aldaketa morfologiko gehien nozitzen duena, flexio eta eratorpen atzizkien banaketa-aldaketa dela kausa. Euskara Arkaikoan ozen bukaerako erroa eta *-i* partizipio marka duten aditzek *-te* atzizkia hartzen dute aditz-izena sortzeko hizkera guztietan: *etorri* → *etorte*, *joan* → *joate*. Euskara Zaharraren lehen zatian, berriz, lapurteraz eta goi-nafarreraz, partizipioa *-i* morfemaz dutenak *-tze* atzizkiaz janzten dira izena eratortzeko: *erortze* (Ax, Ber, EZ, Mat), *etortze* (Ax, Ber, EZ, Mat), *igortze* (Ax, Ber), *ibiltze* (EZ, Mat). Gero, mendebalde eta erdialdean, aditzoinaren desagertzearen ondorioz, aditz-izena partizipioaren gainean eraturik agertzen zaigu. XVII. mendearen lehen erditik aitzina, bizkaierak *-ite* eta *-tute* atzizkidun formak dauzka, Kapanaga, Mikoleta eta *Bertso Bizkaitarr*ek erakusten duten bezala: *yminiten* (Mik 12v), *escatuten* (Kap 146), *artuteco* (*BB* 12e). Gipuzkerak (OA, Iraz), berriz, *-itze* eta *-tutze* formak dakartza: *ausitcen* (Iraz 42), *utcitcen* (Iraz 66), *sinistutcea* (OA 51). Azkenik, Euskara Arkaikoan partizipioa *-n*-z duten aditzek *-ite* atzizkia hartzen dute aditz-izena egiteko (*eman* → *emaite*). XVII. mendearen bukaerarako, atzizki hori desagertzera da hizkera gehienetan. Gipuzkerak (Azp, OA, Iraz) eta goi-nafarrerak (Ber, El, *GNSerm*) ez dakarte horren lekukotasunik, eta idazle lapurtar askok (EZ, Gz, Xu) *-te* atzizkidun forma berria baizik ez dute erabiltzen (*emate*, *errate*, *egote*); aldiz, beste askok forma zaharrari atxikitzen diote, hala nola Axular, Materre eta Etxeberri Sarakoak (*emaite*, *erraite*, *egoite*). Bizkaieraz gehixeago iraun zuen, Arzadun (*itxaraiten*, *emaiten*, *idaraiten*, *izaitera*) eta Urkizuren (*igaiten*, *emaiten*, *urtaiten*, *igaraiten*) dotrinak arte bederen.

Bukatzeko, ondare zaharreko aditzen *e-* aurrizkiari dagokionez, *e-* > *i-* bilakabidea denetan lekukotzen da, nahiz eta euskalki eta garaien arabera aldaketa-maila desberdinak ikus daitezkeen. XVII. mendean, bokal asimilazioa lapurteraz beste hizkeretan baino aitzinatuagoa da: *ibili*, *ikusi*, *iduki* (EZ), *ibili*, *ikusi* baina *eduki* (Ax) vs *ekusi* (Kap, Mik), eta *ikusi* / *ekusi*, *ibili* / *ebili* (Oih *Po*). XVIII. mendearen lehen erdirako, bilakabidea hizkera guztietan aurreratuago ikusten dugu. Idazle bizkaitarrek *i*-dun formak hobesten dituzte (*ifini*, *ikusi* Arz, Urk), eta gipuzkoarrek zein zuberotarrek bi aurrizkien arteko txandaketak ekartzen dituzte (*ekusi* baina *ibili* eta *efini* / *ifini*, *eduki* / *iduki* OA; *ebili*, *egürüki* baina *ikhusi*, *igorri* Mst).[26]

26. Gaur egungo zubereraz, aditz batzuetan baizik ez da gordetzen forma zaharra: *ebili*, *egorri*, *ekusi*, *egüriki* (Camino 2012: 18).

### *3.4.2. Aditz jokatuen paradigmak*

Euskara Zaharrean aditz jokatuen morfologiak hainbat berezitasun aipagarri dauzka, hala aurreko garaian ere lekukotzen direnak (arkaismoak; beheragoko (a) eta (b) ezaugarriak), nola orduantxe agertutakoak (berrikuntzak; beheragoko (c) eta (d) ezaugarriak). Bost baizik ez ditugu hona ekarriko.

**a) *Zuek* pertsonaren aditz-komunztadura**

xvii. mendeko bizkaiera (*EgiaK*, *BB*, Mik), arabera (Portal) eta gipuzkerazko (*TAV* 167) testuetan, *zuek* 2. pertsona pluralak oraino *-zu* komunztadura-marka dauka aditzean. Bestela erranik, bigarren pertsona pluraleko izenordain berria sortuagatik, berrikuntza ez da aditzera hedatu, eta iraganeko pertsona pluralaren (*zu*) komunztadura-morfema mantendu da. xviii. mendearen lehen erdian, berriz, Arzadun eta Urkizu bizkaitarren, zein Otxoa Arin eta Irazusta gipuzkoarren idatzietan *zuek* pertsonak bere komunztadura-marka propioak dauzka.[27] Mikoleta eta Barrutiak bi egoera horien bitarteko une bat erakusten digute, zeinetan *-zu* nagusiaren ondotik *-zue*-ren adibiderik ere agertzen hasten den (Lakarra 1996b: 173-176).

(10) Gazteac **eguiçu** dança eta saltu / Paris bear dogu urtera artu (*EgiaK* 206-207)
(11) Fantasiaric **estaguiçula**, / Seraphin escogituac (Prt, *TAV* 120)
(12) Ene seme alaba chipi laztanchoac, oficio citalori **eutci eguiçu**, **biurtu zaitez** Jaungoico poderosoagana, sinisten **deçula** Jesu Christo Criadore Redento[re]agan (*TAV* 167)
(13) Veguicoric **eztegiçuen** bularchorean isegui (Bar 471)

**b) *a* / *e* bokal-txandaketa**

Bizkaiera (Mik, Kap, *EgiaK* eta *BB*) eta gipuzkera zaharrean (OA, Azp), *a* / *e* aditz erroaren aurreko bokal alternantziak adizki bipertsonalak (*a*) eta adizki hirupertsonalak (*e*) bereizten ditu (Mitxelena 1954b, Lakarra 1996b: 165-166).

(14) Edan **daysu** ostera, se **esteysu** gachic (Mik 13r)
(15) Estuan **daroaçu** ceure colcoa (*EgiaK* 90)
(16) Ventaja romanoay **deroessu** Ysassi (*BB* 17)

---

27. Baina ik. orain Erauskinen aditz taulak, non ia beti 2. pertsona pluraletan *zu*-ri dagozkion komunztadura-markak erabiltzen diren (Gómez 2015).

**c) *-z* pluralgilea**

Euskara Arkaikoan *-it-* da **edun* aditzaren pluralgilea hizkera guztietan. Mendebaldeko Euskara Zaharrean *-z* pluralgilea hedatzen da,[28] eta aurreko pluralgilearekin batera agertzen da, edo hura osoki ordezkatzen du, subjektua 1. eta 2. pertsonakoak dituzten adizkietan: *zaitut* → *zaitudaz* (Arz, Kap), *ditut* → *dodaz* (Arz, Kap, Urk), *dituzu* → *dozuz* (*EgiaK*), *ditugu* → *doguz* (Arz, Mik, Urk). Ohar gaitezen objektua 1. edo 2. pertsonako objektua duten adizkietan ez dagoela *-it-* gabeko formarik (*zaitudaz* baina ez **zaudaz, *gaituzuz* baina ez ***gauzuz*). Hirugarren pertsonetan, agertzekotan, pluralgile berria pleonastikoki, *-it-*ekin batera, agertzen da: *dituz* (Mik, Arz, *EgiaK*), *zaituz* (*EgiaK*).[29] Kapanagaren lekukotasuna bereziki interesgarria da, aldaera zahar eta berriak —pleonastikoak eta ordezkapenezkoak— elkarren ondoan bizi izan ziren egoera erakusten duelako: *dodaz* / *ditudaz*, *doguz* / *ditugu*, *ditu* / *dituz*. Mikoletaren elkarrizketan eta *Viva Jesus* dotrinan ere *ditu* eta *dituz* formak aldizkatzen dira.

Aztergai dugun garaian, *-z* pluralgilea beste hainbat aditzetako pluraleko formetara hedatzen da,[30] gaur egungo euskaldun gehienei oso arruntak zaizkien forma pleonastikoak sortuz: adibidez, **edin*-en pluraleko adizkiak (*zaite* → *zaitez*, *gaiten* → *gaitezen*, *daiten* → *daitezen*), zeinetan *-te* pluralgile zaharrari *-z* gehitu zaion. Halere, ohar gaitezen garai honetan bi formak, zahar eta berriak, erabiltzen direla mintzaira askotan: *zaite-* / *zaitez-* (Ax, Xu, EZ, Mat, SP, Gz, He, Kap), *gaite(a)n* / *gaitezen* (Arg, Bar, El, EZ, Gz, Hm, OA).[31] Ekialdeko hizkeretan forma zaharrak baizik ez dira lekukotzen (Tt, Mst).

**d) *-te* / *-ke* atzizki modalak**

Euskararen lehenbiziko lekukotasunetan *-te* eta *-ke* atzizkiak banaketa osagarrian agertzen dira haien betekizuna edozein izanik (geroaldia, ahalera, modalitate epistemikoa, hipotetikoa). Zehazkiago, *-te* atzizkia *izan* eta **edin*-en adizkiei eransten zaie, argumentu bakarrekoak direnean (NOR). Aldiz, bipertsonalak direnean (NOR-NORI), *-ke* atzizkiaz janzten dira: *date* (Leiz *Mt* V, 21) vs *etzaiqueon* 'ez zitzaiokeen' (Leiz *Heb* VIII, 7); *echun ayte* 'etzan haiteke' (*RS* 394) vs *sendaquique* 'senda hakioke'(*RS* 251). Gainerako aditzek,

---

28. Aldaketaren lehen lekukotasunak XVI. mendekoak dira (*RS*); ik. aurreko kapitulua, § 3.4.2c.

29. Gogoan har bedi *dauz* bezalako 3. pertsonako formarik ez dela agertzen XIX. mendearen bigarren erdira arte (ik. besteak beste Arrese-Beitia, Azkue edo Lauaxetaren idazlanak).

30. **Edin*-en forma pleonastikoen lehen agerraldiak *Arrasateko erreketa*ren kantan aurkitu ditugu: *gayteza[n]* (26), *citeçan* (33).

31. Iduri luke *-z* pluralgiledun forma lehenago nagusitu dela pluraleko 1. pertsonaren adizkian. Soilik *gaitezen* forma erabiltzen duten autoreak (Arz, Ax, Bar, Ber, Xu, He, Iraz, Kap, Mat, SP, Urt) *zaitez* bakarrik erabiltzen duten autoreak baino gehiago dira (Bar, Ber, Zub).

iragankor zein iragangaitzek, *-ke* atzizkia baizik ez dute hartzen garai historikoetan: *datorke*, *lekarke*…

Euskara Zaharrean *-te* atzizkiaren erabilera urrituz doa, batzuetan *-ke* atzizkiak osoki ordezkatu baitu (*daike & lizake* El), edo pleonastikoki haren ondotik txertatu, *-teke* atzizkia sortuz (*dateke*, *daiteke*, *lizateke*).[32] Halere, aldaketa ez da bururaino eramana. Hizkera askotan *-te* atzizkidun forma baizik ez da erabiltzen: *zate-* (Ber) vs *zateke-* (Ax, ES, Hm, Mt, Tt); *date* (Bp, Hm) vs *dateke* (Ax, Mt); *lizate* (Ber, Bp, EZ, Gz, He, Kap, Mik, Tt, OA) vs *lizateke* (Iraz) vs *lizake* (El). Edo forma berria eta zaharra txandaka erabiltzen dira: *date* / *dateke* (El, ES, Harb, Tt, SP), *lizate* / *lizateke* (Ax, ES, Harb, SP), *daite* / *daiteke* (Arg, EZ, Gz, Harb, SP), *daiteke* / *daike* (El).

**e) **edun*-en adizkiak eta hirupertsonalak**

**Edun*-en adizkien formak ugariak dira haren erroko bokalaren bilakabidea dela kausa. Aitzineko garaian bezala, Euskara Zaharrean ere *do-* (mendebaldea), *de-* (erdialdea), *deu-* (gipuzkera eta arabera), *du-* (ekialde zabala), *dü-* (zuberera) hastapenak biltzen dira NOR 3. pertsonakoa duten adizkietan (*dot*, *det*, *deut*, *dut*). Azpimarratzekoa da *deu* diptongoduna gipuzkera zaharraren aldaera arrunta bada ere (OA, Azp), ondoko garaian testuetatik desagertuko dela *du* aldaeraren onetan. Irazustak *du* dakar, baina baita *deban* eta *debela* ere.

Lehen testuetatik, egitura hirupertsonaletan (NORK-NORI-NOR) **edun* laguntzailea beharrean **i*, **edutsi*, **eradun* laguntzaileak erabiltzen dira. Euskara Zaharrean **edutsi* mendebaldeko hizkeren laguntzaile hirupertsonal bakarra da (17). Ekialde zabalean (Ipar Euskal Herria eta Nafarroa Garaia), berriz, **eradun* eta **i* aditzak banaketa osagarrian dira. Halere, azken honen erabilera-esparruak oso murriztuak dira, normalean NORI 3. pertsona denean baizik ez delako agertzen (18-21). Gipuzkera zaharrean ere bi aditz horiek erabiltzen dira, bizkitartean, alderantzizko maiztasunarekin: **eradun* pluraleko objektua duten egituretan agertzen da eta **i*, aldiz, gainerako testuinguru guztietan (22-24).

(17) **Escribietan deusun** carta gustian / yfinten çaituz çeu çoor andian (*EgiaK* 145-6)
(18) Naturaleçac **eman darozquigu** (dio) arroçoinamendua, eta esperientcia (ES *Hats* 19)
(19) Eta **erran draugu** çuec Bazco egunean partitu cinatela (Ber *Trat* 113v)
(20) **Escacen diogu** barcadrazquigun […] eta digun favore eta gracia ongui viciceco (Ber *Trat* 29v)
(21) Meça **entçunaracidiot** (ES *Hats* 6)

32. XVI. mendean, Leizarraga eta Betolatzaren testuetan baizik ez dugu aurkitu forma berririk: *çatequeen* (Leiz *Mt* XXVI, 9), *ciratequeen* (Leiz *Mt* XI, 21), *leytequean* (Bet 98).

(22) **Ofrecitcen dirautçut** neure vicia, neure anima, neure obrac (OA 145)
(23) Baldin bagaude pecatuaren estaduan, **ematen dirauzcu** Jaungoicoac bere auxilioac (OA 58)
(24) **Ematen digu** gueure salvacioraco bere gracia (OA 24)

### *3.4.3. Denbora, aspektua eta modua*

Denbora, aspektua eta moduaren adierazpideen aurkezpenarekin hasi aitzin, egitura trinko eta perifrastikoei buruzko ohar batzuk eginen ditugu.

Lehenik, Euskara Zaharrean aditz trinkoak aditz-sistemaren bazterreko formak bihurtzen dira, egitura perifrastikoak hedatuz doazen heinean. Alde batetik, aitzineko garaian zituzten funtzio zenbait galtzen dituzte (iragan burutua, geroaldia, subjuntiboa, ahalera) eta, bestetik, aditz askoren jokabide trinkoa desagertzen da.

Aldi berean, perifrasien gramatikalizazioa aitzinatzen da eta, ondorioz, higatze fonetikoa dela medio, adizkietako kontrakzioak hasten dira zabaltzen. Adibide batzuk aurki daitezke, besteak beste, Mikoleta (*ustiosu* 'uste dozu' 12r, *naystot* 'nahi ez dot' 12v), Elizalde (*egoinlizaque* 'egonen litzake' 55), Etxeberri Ziburukoa (*ekhartcen tic* 'ekartzen ditik' *Man* I, 16, *eman tutçun manuac* 'eman dituzun manuak' *Man* I, 18), Gazteluzar (*zertako tugu hedoiak* 'zertako ditugu hodeiak?' 120) eta Etxeberri Sarakoaren idatzietan (*beharriac erne tuzte* 'dituzte' *Hats* 292, *uzten tut guztiac* 'ditut' *GC* 33).

Gaur egun 'subjuntibozko perifrasi' gisa izendatu ohi diren [aditzoina + **edin* / **ezan*] eta [partizipioa + *egin*] perifrasiek aldaketa handiak nozitzen dituzte Euskara Zaharrean. Mendebalde eta erdialdean, gorago aipatu aditzoinaren ordezkatze eta partizipioaren hedatzearekin batera, **ezan* laguntzailea urrituz doa, *egin* laguntzailearen onetan. Zuzenago erranik, [partizipioa + *egin*] perifrasiak [aditzoina + **ezan*] perifrasiaren lekua hartzen du, azken hau osoki desagerrarazi arte. XVII. menderako [aditzoina + **ezan*] perifrasiaren ordezkatze-prozesua franko aitzinatua zen bizkaieraz: Kapanaga, Mikoleta zein Amilletaren testuetan iharturik agertzen zaigu, eta esapide lexikalizatuetara mugaturik. Ondoko menderako alde bat desagertua da Arzadun eta Urkizuren hizkeretarik, eta Barrutia dugu egitura hau erabiliko duen mendebaldeko azken autorea. Gipuzkeraz, berriz, [aditzoina + **ezan*] egitura bizirik da Euskara Zahar osoan. Nahiz eta [partizipioa + *egin*] perifrasia ere erabiltzen den, aitzineko perifrasi iragankorra da nagusi testu gehienetan.[33] Azkenik, goi-nafarrera zaharrean[34] **erazan* laguntzailea lekukotzen da egitura hirupertsonaletan: *abisacenditu guciec graciac emandrazquioten Iaunari* (Ber

33. Xehetasun gehiagorako ik. Mounole (2007).

34. Segur aski Euskara Arkaikoan ere, gureganaino heldu den goi-nafarreraren XVI. mendeko testu bakarrenetarik batean ikus daitekeenez: *parca derozola* (Juan de Irañetaren gutuna, *TAV* 60).

*Trat* 69r), *suplicacen drauçut eman drazadaçun çure fauorea* (Ber *Trat* 121v), *eros draçogun* (Irñ 1609). Elizalderen dotrinan ez da laguntzaile horren aztarnarik, ezta ondoko gizaldietako goi-nafarrerazko idazkietan ere (Camino 2003: 75).

### 3.4.3.1. Denbora eta aspektua

#### a) Oraina

Euskara Zaharrean [*-t(z)en* + *izan* / **edun*] perifrasia eta trinkoak oraineko egoera baten adierazteko bi modu nagusiak dira (25-28). Jokabide trinkoa duten aditzak perifrasi horren bidez joka daitezke, eta halakoetan forma trinkoa eta perifrastikoa esanahikideak ere izan (konpara bitez 29-30 eta 31-32):[35]

(25) Ni naiz aide eta arla **dacazquit** bi seme mana zazun jarri daitezela batau escuilco aldean, eta berceau ezquerrecoan zure erreinuan (*GNSerm* 2)
(26) Estuan **daroaçu** ceure colcoa (*EgiaK* 90)
(27) Onec adicera **ematen draugu** veztidura churia (Ber *Trat* 10v)
(28) **Sinisetan dot** Iaungoico aitaguztizpoderosoagã (Kap 5)
(29) **ikhusten duçu** hitzcuntça hebreoa dela gucietaric lehenbicicoa eta çaharrena (ES *GC* 14)
(30) Hargatic, ordea, **dacusagu** hitzcuntça hec bethiere dohacila aitcinatuz, hedatuz eta edertuz (ES *GC* 35)
(31) **Euquiten dogula** orain, gùeure pecatu guztien damuari andi bat (Urk 68)
(32) considerauco da guèuc ez bacarric **daucagúla** Doloreric chicarrena (Urk 15)

Solas-egoeran pertinentzia duen gertakari iragan bat [*-tu* + *izan* / **edun*] perifrasiaren bidez adierazten da euskalki guztietan (33-34). Honez gain, perifrasi birkonposatuak ere biltzen dira gipuzkeraz (OA), lapurteraz (ES) eta zubereraz (Mst) perfektuaren balioarekin (35-37). Edozein kasutan, perifrasi batean zein bestean, laguntzaileak beti orainaldiko morfologia du.

(33) **Esteusut esan** sedeguidisula ecarri orrelaco comparaçiñoyric? (Mik 12v)
(34) Guiçon oni **heratu çayo** (Ber *Trat* 113v)
(35) Guisa bateç noun aitcinetic erreus, eta comunionia beno lehen bere buriac, bihotceco amourioric gabe senditu çutienac; guero celuco janhari, eta edateco haren har oundouan, edireiten beitutie hounialat **khambiatu içan direla** (Mst IV, 3)

35. Euskara Arkaikoan, berriz, jokabide trinkoa duten aditzak oraineko perifrasiaren bidez jokatzen direnean, forma trinkoak ezin adieraz ditzakeen ñabardura aspektualen ekartzeko da: besteak beste, ohitura, maiztasuna (ik. aurreko kapitulua, § 3.4.3).

(36) nola istorioac eta autoren isquiribuac baitira landa eder eta çabalac, ceinetan causitcen baitira falac eta garba eppaitecoac, halatan laster **eguin içatu dut** landa eder, çabal eta aberats hetara (ES *Hats* 284)

(37) Concienciaren examinan confunditcen diraden personac, eta ecin averiguatu debean aec euren pecatuen numero ciertoa, edo contu ciertoa ecin ajustadu debenac cembat **pecatu eguin izan debean** Mandamentu bacoitzaren contra essan beze cembat tempora egon diraden pecatuan (OA 133)

**b) Iragana**

Euskara Zaharrean aldaketa handiak ikusten dira iraganeko formetan.

Lehenik, iraganeko aditz trinkoek aurreko garaian zuten balio aspektual bikoitza galduz doaz eta egoera burutugabeetara mugatzen dira. xvii. mendeko testuetan aurkitzen ditugu balio burutua duten azken adibideak (38-40), xviii. mendean iraganeko trinkoek balio burutugabea baizik ez baitute ekartzen (41-42).

(38) Au ta sillac **etorsan** Salamancaric (Mik 13v) ‘El y las sillas vinieron de Sala(man)ca’

(39) cerren bay **neguian** pecatu gravemente (Kap 20) ‘porque pequé gravemente’

(40) Cetaraco **senguisen** Iangoicoac? (*VJ* 7) ‘egin zintuen’

(41) Jaungoicoac genero humanoari **cigon** amorio infinito aren obra (OA 31)

(42) miresteco gauça **cecusaten**, ceren, Glosac dioen beçala (ES *GC* 25)

Gero, Euskara Arkaikoan euskalki guztietan iragan burutuaren balioarekin erabiltzen ziren [aditzoina + **edin* / **ezan*] eta [partizipioa + *egin*] perifrasiak desagertu dira hizkera gehienetarik. Erabilera horren azken lekukotasunak xvii. mendean agertzen zaizkigu bazterretako hizkeretan, bizkaieraz (*VJ*, Mik, *EgiaK*, Kap) eta zubereraz (Oih *Po*) hain zuzen.

(43) **Hil cidin** Iangoico zan leguez (*VJ* 6)

(44) non **eguin sidi**? (Mik 13r)

(45) **egon zedin** pentsaketan (Oih *Po* XXVI, 23)

Azkenean, Euskara Zaharrean iragan burutuko forma nagusia partizipioaz eta *izan* / **edun* iraganeko laguntzaileez osaturiko perifrasia da hizkera guztietan. Euskara modernoan bezala, egitura horrek iragan burutuaren bi balioak ekar ditzake: iragan narratiboa, gaztelaniaren *pretérito perfecto simple* delakoaren parekoa dena (46-47), edo pluskuanperfektua (48). Perifrasi honen ondoan, hizkera zenbaitetan beste egitura batzuk ere badaude iragan narratiboa adierazteko. Lehenik, perifrasi birkonposatuak aurkitzen ditugu erdialde eta ekialdeko hizkeretan, laguntzailea orainekoa (Ht, OA) edo iraganekoa (Ber, ES, OA, Mst) izanik (49-50). Gero, lapurtera eta zubererazko testuetan,

[partizipioa + oraineko *izan* / **edun*], perfektua adierazteko ohikoagoa den perifrasia, iragan narratiboaren balioarekin erabiltzen da (51-52). Edozein kasutan, aipatu berri ditugun egitura horiek oro [partizipioa + iraganeko *izan* / **edun*] baino arras maiztasun apalagoarekin baliatzen dira.

(46) Orduan Pilatusek Jesus / Bere gaiñki **zuen hartu**; / Gero burreuek haren salan / billuzirik azotatu (Gz 148)

(47) Sartu citeanean ondar ybayan / Franciaric ecardeçan eurac aldean / Viciçac, osassunac, esperança andiac / an **galdu cituen** Frances gustiac (EgiaK 115-118)

(48) Castidadearen contra edoceinereco moduz eguin dituan pecatu aetan advertidu beza cer circunstanciaco, eta cer estaduco personáquin deleitea izan ceban, edo deseoa, edo obra: ote ciraden voto castidadecoa **eguin ceban** personàc (OA 159)

(49) Eta berhala consolaturic, eta açcarturic Jincouaren boronthate saintiaren pian jarri **içan cen**, eta haren duda, horrat hounat çarabilana, baratu **içan cen** (Mst I, XXV, 2)

(50) Confessio Generala eguitera daude necesidadeaz obligaturic persona aec guciac, ceñeac leen **eguin içan debean** confessio gaiztoren bat, edota cerren confessio artan esan cebean gueçurra gauza gravean, edo andian: edo cerren maliciaz, lotsaz, edo bildurraz eutci cebean pecatu mortalen bat confessatu bague (OA 130)

(51) O çoumbat thurburarçun pheçuric **soferitu dien** Apostoliec, Martirec, Confessorec, Birginec, eta beste Jesu Kristen hatcer jarraiki nahi içan derenec oroc! (Mst I, XVIII, 2)

(52) Profecia hau **complitu da** ossoqui, noiz eta ere Tubal escualduna bi erregue handi eta Eliçaco seme fidel eta leyal hauquien majestateari **juntatu baitçaje** (ES *Hats* 94)

Burutugabeaz den bezainbatean, bi formaren bidez adierazten da. Jokabide trinkoa duten aditzak iraganeko forma trinkoaz janzten dira; ik. goraxeago Otxoa Arin eta Maisterren (48-49) adibideak: *ciraden*, *çarabilana*, hurrenez hurren. Gainerakoek [*-ten* + *izan* / **edun*] perifrasia hartzen dute (53-54).

(53) Adio **erraiten cien** aberastarçuner, carguier, ouhourer, eta ascacier orori (Mst I, XVIII, 3)

(54) Duda **ematen ceban** gauçaren baten gañean (OA 148)

Bukatzeko, XVI. mendean mendeko perpausetan hipotetikozko adizkiak erabiltzen dira perpaus nagusiko aditza iraganean delarik. Zehazkiago, 3. pertsonako adizkiak *l-* aurrizkidunak dira. Ondoko mendeetan komunztadura hori higatuz doa eta erran genezake Euskara Zaharraren azken garairako zubereraz baizik ez dirauela bizirik (55).

Etxeberri Sarakoaren eta Urkizuren testuetan adibide bana bildu dugu, zalantzarik gabe, erabilera horren fosilak direnak (56-57). *Viva Jesus* dotrinan, *l-* aurrizkiduna eta iraganeko forma arrunta txandaka agertzen dira perpaus berean:

(55) Psalmiac eguin çutian, eta manu eman khantatiac **içan litian** (Mst 336)
(56) hasi nintcen […] hitztegui baten moldatcen cembait fagore eta laguntça **içan leçatengatic** (ES *GC* 37)
(57) Encarguètan eusten guztiai **artu legùiela** debozino au (Urk 24)
(58) Iesus dulcissimuec ofrecidu eguion sâtu glorioso honeri bere eriozaco horduen bere debota hicen didineri, da **errezadu leguionari** zaspi Pater Noster […] **alcanzaduco leucela**, eta **euguico ebela** erioza hon bat (*VJ* 16)

**c) Ohitura**

[Partizipioa + *joan* / *eroan*] perifrasia oraino lekukotzen da ohituraren balioarekin XVII. mendeko hiru testutan, Mikoleta eta Kapanaga bizkaitarren eta Oihenart zuberotarraren idatzietan, hain zuzen. Euskara Zaharraren bigarren erdirako hizkera gehienetarik desagertua zen, bizkaieraz salbu, euskalki horretan XVIII (Olaetxea 1763) eta XIX. mendeetan (Añibarro 1821, 1969, Mogel 1881, Zabala 1848) oraino agertzen baita (Azkue 1923-25).

(59) Lan aitzineti pagatua **ihesi doa** (Oih *Prov* 293)
(60) Iuramendu modu **eguin daroe** (Kap 93)
(61) Ori da bat yru gausetaric **esan eroena** Ganasac (Mik 12v)

**d) Geroa**

Aztergai dugun garaian, forma trinko eta perifrastikoak erabiltzen dira geroaldia adierazteko.

Euskalki guztietan, geroaldiaren balioa hartzen duten forma sintetikoak *-te* / *-ke* atzizkia erantsia duten oraineko formak dira. Euskara Zaharrean haien erabilera urrituz doa —aurreko garaian jadanik hasia zen prozesua (ik. aurreko kapitulua, § 3.4.3.1d)—. Beti ere, XVII. mendeko testuetan, XVIII. mendearen lehen erdian baino gehixeago biltzen dira: goi-nafarreraren kasuan Beriainen *Tratado*n eta Iruñean 1609an saritu poesietan nasaiak dira (*egon*, **edun*, *izan* aditzenak lehenean, *izan*, *eman*, *ikusi* aditzenak bigarrenean), baina Elizalderen testuan ez dugu bihirik atzeman. Etxeberri Ziburukoak geroaldiko trinko andana bat ekartzen du bere *Manual*ean (**edun*, *egon*, *etorri*, *ibili*, **io*, *iraun*, *izan*[36] aditzenak); Etxeberri Sarakoak, berriz, *izan* eta **edun*-en geroaldiko formak

36. Hobeki erranik **edin*, garai horretan hasten baita lapurteraz gertatu den *izan* eta **edin*-en *-te(ke)* atzizkidun adizkien arteko nahasketa **edin*-en alde: *Orduan daiteque azken iuiamendua* (EZ

baizik ez ditu gordetzen. Bizkaieraz, trinkoek geroaldiko paradigma lehenago galdu bide zuten, XVII. mendeko testuen artean batek baizik ez duelako erabilera horren adibide bat ekartzen, *Bertso Bizkaitarr*ek, hain zuzen. Halaber, zubereraz, Belapeire zein Maisterrek *izan*, **edun* eta *jakin*-en —azken hau bakarrik Maisterren testuan— adizkiak baizik ez dituzte agerrarazten geroaldiaren balioarekin.

(62) **estacusque** (Irñ 1609 76)
(63) **datorquen** egunetan ez dut cehaturen gorputça (EZ Man II, 63)
(64) zuoc ere **bazaozque** (BB 23)
(65) Ordian praubiac, eta umilac confidantchá handi bat **baduke**, eta urgullucia cantou orotaric ikharaturen da (Mst 74)

Bizkaiera Arkaikoan, *egin* aditzaren orain 'biluziko' formak, erran nahi baita atzizki erantsirik gabeak (*-ke*, *-(e)n*…), geroaldiaren balioa du. Euskara Zaharrean, Mikoletak baizik ez du erabilera horren lekukotasunik ekartzen, eta bat baizik ez. Bestela erranik, erabilera hau XVII. mendean zehar desagertu zatekeen.

(66) Edan daysu ostera se **esteysu** gachic (Mik 13r)

Gizaldi berean, [partizipioa + *egin*] perifrasiak mendebaldeko hizkera arkaikoetan har zezakeen geroaldiaren balioa ere galdu zuen; *Egiaren kanta*, Kapanaga, *Bertso Bizkaitarrak* eta Mikoletak eskaintzen dituzte erabilera horren azken adibideak:

(67) Baçaquioz virtuteari beti jarraitu / santuçat Iaungoicoa **ecussi daiçu** (*EgiaK* 190-91)
(68) Zuen alde **eguin day** (BB 22)
(69) **Edan daysu** ostera se esteysu gachic (Mik 13r)

Azkenean, Euskara Zaharrean [*-tuko, -turen* + *izan* / **edun*] perifrasia da geroaldiko forma nagusia euskalki guztietan.

(70) Ihes **eguinen daroet** bekhatuzco paradei, eta vngui eguiteco iarraiquico atticei (EZ Man I, 74)
(71) Becaturic ez eguiteco nola **erranen dugu**? (El 48)
(72) Non **ydorocogu** ona ysandin bat? (Mik 13v)

*Man* I, 11), aurreko garaian *orduan dateke azken iuiamendua* izanen zena.

3.4.3.2. Modua

Moduari dagokion atal honetan, subjuntiboa, agintera, ahalera eta baldintza aztertuko ditugu, hurrenez hurren.

**a) Subjuntiboa**

Historiaurreko garaietan euskarak ez zukeen subjuntiborik. Orduan, forma arruntak, markatugabeak, erabil zitzakeen hizkuntza erromantzeek forma berezi batzuk, subjuntibozkoak baliatzen dituzten testuinguruetan (mendeko perpaus helburuzkoetan, adibidez). Subjuntibo morfologikoa Euskara Arkaikoaren eta Euskara Zaharraren artean sortu zen hein handi batean, [aditzoina + **edin* / **ezan*] eta [partizipioa + *egin*] mendeko perpausetara zokoratu eta horietarik batzuen ezinbesteko forma jokatuak bihurtu zirenean.

Indikatiboaren eta subjuntiboaren arteko bereizketa morfologikoaren aurreko garaitik heldu zaigu trinkoak mendeko perpaus helburuzko eta osagarrietan erabiltzeko ohitura. Erabilera hau azkarki urritu zen Euskara Zaharrean, lehen erran bezala, [aditzoina + **edin* / **ezan*] eta [partizipioa + *egin*] subjuntibozko forma gisa espezializatu ziren heinean. Zehazkiago, xvii. mendean, euskalki guztietan biltzen dira horrelako sintetikoak: bizkaieraz (Kap, Mik), goi-nafarreraz (Ber, Irñ 1609), lapurteraz (EZ, Ax, Gz…), zubereraz (Bp). xviii. mendearen lehen erdirako, aldiz, emankortasun oro galdua zuten euskalki gehienetan. Ez dugu erabilera horren aztarnarik aurkitu Otxoa Arin eta Irazusta gipuzkoarren, ezta Arzadun eta Urkizu bizkaitarren testuetan ere. Goi-nafarreraz bana adibide bildu dugu Elizalderengan eta 1729ko sermoian, biak **i* 'eman' aditzarenak. Segur aski fosilak dira. Azkenean, lapurteraz eta zubereraz baizik ez zen bizirik Euskara Zaharraren azken garaian. Adibidez, Etxeberri Sarakoak *izan*, *eman*, *egin*, *erran*, *joan*, **edun* eta *egon*-en adizkiak eta Maisterrek **edun*, *izan*, *egon*-enak erabiltzen dituzte mendeko perpaus helburuzko eta finaletan.

(73) Enessat oneyc dira egunac bear dogusanac esean sartu esan daroen aleguez. Ta **daucagusula** oean esan leye obato (Mik 13r)

(74) Becatariac bearrẽduena becatuetatic atraceco da Iaungoycoa […] eta […] alabarcadrazquion becatuac eta **demon** vere gracia (Ber Trat 107)

(75) Arren permiti eçaçu **derradan** iaquiara (EZ *Man* I, 62)

(76) Cer escacen da itz ontan: Etorrivedi zure erreynua? Geldi dadila gure baitan aren gracia; eta güero **digula** gloria (El 45)

Ororen buru, [aditzoina + **edin* / **ezan*] eta [partizipioa + *egin*] perifrasiak dira testuinguru hauetako forma nagusiak, baita trinkoak erabiltzen diren euskalki eta garaietan ere.

(77) Obe dau egoitea / bere erri aldeti / egun, biar, **didin vizi** (*BB* 16)
(78) Houn da gouretaco çoumbait greutarçun **ukhen deçagun** çoumbait aldiç (Mst 27)
(79) eztut nahi ekharri bertce arroçoinic ez frogaric, baicic **iracur deçaçun** Axularren obra (ES *Hats* 174)

Azkenik, bizkaiera arkaiko eta zaharrean, *ze* ezeztapenezko partikula erabiltzen da mendeko subjuntiboetan eta aginteran. Besteak beste, Mikoleta, Kapanaga edo *Viva Jesus* dotrinak ekartzen dizkigute horren erabileraren lekukotasunak. Barrutia, Urkizu eta Arzadunen testuek iradokitzen dute XVIII. menderako *ez* partikulak ordezkatua bide zuela, hizkera zenbaitetan behintzat.

(80) Esteusut esan **sedeguidisula ecarri** orrelaco comparaçiñoyric? (Mik 12v)
(81) esqueetan iacala [...] arean iausten **echi cedeguiola** il din artean (Kap 123)
(82) Azkonarraren azamarchoa ekarriko dot menditi, / begizkorik **eztegizuen** bularchorean **isegi** (Bar 465)

**b) Agintera**

Aginteran, forma trinkoak, eta [aditzoina + **edin* / **ezan*] eta [partizipioa + *egin*] perifrasiak lekukotzen dira, nahiz eta lehenbizikoak Euskara Arkaikoan baino urriagoak izan.

(83) **eracuscuzu** Jesu Christo, ceure sabeleco frutu bedencatua (Arz 17)
(84) **eramacie** amarren gucia ene granerora (GNSerm 5)
(85) Laster **egizu** ene laguntzera (Gz 46)
(86) **urgazi eguiosu** criadeari (Mik 14r)
(87) **urricari çaquizquigu** barcacen dizquiguçula gueuren faltac (Ber *Trat* 43)

Euskara Zaharrean oraino aurkitzen dira geroaldiko aginterazko adizkiak. Formaz, *-te* / *-ke* atzizkia duten aginterazko adizkiak dira —sintetikoak edo perifrastikoak—, eta adierazten den agindua solas-unearen ondotik burutzekoa da. Besteak beste, lapurtera (EZ), gipuzkera (OA, TBI) eta bizkaierak (Bar, *EgiaK*) ematen dute erabilera horren berri. Azken euskalki honetan baizik ez zuen biziraun Euskara Zaharraren ondotik (cf. Añibarroren *Escu-liburua*ren bigarren edizioa eta Zabalaren deskribapenak).

(88) Arren **fauora çaquezu** hersturan dabillqueena (EZ *Man* I, 60)
(89) Crutce Santua adoratcen dezunean, **esan eiquezu** (OA 14)
(90) Arrasean **oaque** olloquin afaritara (TBI 36, TAV 128)
(91) Virginearen bespera, egun gustia, / secula **gorde eiqueçu**, ondar ybaya (*EgiaK* 192-93)

(92) Anteoxoac **ybini eizq** Charlesicocho laztana (Bar 330)

Aztergai dugun garaian, berrikuntzak ikusten ditugu aginterazko forma jokatuen morfologian. Goi-nafarrerak eta lapurterak aginterazkoak ez diren adizkien *d-* aurrizkia eransten diote **ezan* laguntzaileari, seguruena subjuntibozko adizkiekiko analogiaz. Nahiz eta autore gehienek delako aldaketa adizki hirupertsonaletan baizik ez duten garatu —besteak beste, Har, ES, Urte, Ber, El (93-94)—, bada bipertsonaletan ere *d-* aurrizkidun formarik erabiltzen duenik —Urt, Gz, adibidez (95)—.

(93) çoas Meza ençutera eta **ofreci draçoçu** an ofrecicenden sacrificioa (Ber *Trat* 107v)
(94) **eracuts deçoçu** mundu guztiari çure çuhurtcia (ES *Hats* 24)
(95) zuen ardi eta bildots / **gustiak utz detzatzue** (Gz 78)

Azkenik, Euskara Zaharrean, lehen pertsona pluraleko jusibozko forma berri bat agertzen zaigu iragankorretan, goi-nafarrera, lapurtera eta zubereraz: [*dugun* + aditzoina] egitura.

(96) **Dudan galdeguin** daquienari (El 48)
(97) **Dugun bilha** (ES Hats 15)
(98) Orai, **dugun entçun** D. Sebastian de Covarrubias Orozco (ES Hats 70)
(99) Ayons: **dugun içan**, içan deçagun; ayons les: **ditugun içan**, içan detçagun (Urt 169)
(100) **Dugun egotch** çagniala achcora colpia (Mst 26)

**c) Ahalera**

Euskara Zaharrean, ahaleraren adierazpideak franko aldatu dira. Forma trinkoak gibelka ari dira, eta perifrasi berri batzuen agertzeak modalitatearen atal horren berrantolaketa eragin du.

Aurreko garaian ahalerazko forma perifrastiko nagusiak (eta askotan bakarrak) ziren [aditzoina + **edin* / **ezan* + *-te* / *-ke*], [aditzoina + **iro*] (GN, L, BN, Z) eta [partizipioa + *egin*] (B, A, G) perifrasiak oraino bizirik dira euskalki guztietan. Goi-nafarrerak (Ber, El, adibidez) eta lapurterak (adibidez, Ax, ES, EZ, Gz) perifrasi horiek baizik ez dauzkate ahalera adierazteko. Bestela erranik, berrikuntzak bi muturretako eskualdeetatik heldu zaizkigu. Aipatu perifrasien ordez, Barrutiak [partizipioa + *izan* / **edun*] eta Maisterrek [*-ten* + *izan* / **edun*] perifrasiak erabiltzen dituzte oraineko eta iraganeko ahalera adierazteko —biak, ezinbestean, *ahal* eta *ezin* partikulez lagundurik—. Gipuzkera bi joera horien artean kokatzen da: Otxoa Arinek perifrasi zaharrera jotzen du nagusiki eta [partizipioa + *izan* / **edun*] perifrasia han-hemenka baizik ez du erabiltzen.

(101) Gorpuz vicia **ezin dagoque** odolic bague (El 55)
(102) ceren mintçoric gabe **ecin baitciratezqueen** (ES GC 11)
(103) Jangoycoaren iza faltadaiteque? Ez, cergatic **ezin engañadaiteque**, eta gu **ezin engaña gaizaque** (El 40)
(104) Izpiritu chumec eta flacoec **ecin sostenga eta soporta detçaquete** eguiteco eta ekhai handiac (ES Hats 110)
(105) Izorra sentizen dot neure esposea / **Aditu ezin dot** nik zer dan kausia (Bar 56)
(106) Bakian ere **ecin** luçaç **egoiten da,** tchipienic, eta beste ororen petico içatera, isseiatcen eçtena (Mst 41)
(107) Moisa *çoure* cerbutchari handiac, eta adichkide berheciac eguin ciçun, çour **ecin gastatcen cen** batetaric arkha bat (Mst 334)

XVI. mendeko euskaran ez zen bereizketa morfologikorik oraineko eta geroaldiko ahaleraren artean. Bietarako, trinkoak eta [aditzoina + **edin* / **ezan* + *-te* / *-ke*], [aditzoina + **iro*] (GN, L, BN, Z) eta [partizipioa + *egin*] (B, A, G) perifrasiak erabiltzen ziren, eta testuinguruak baizik ez zezakeen argitu adizkiak orainari ala etorkizunari begira zeuden. Euskara Zaharrean, berriz, geroaldiaren ahalerazko forma propio bat agertzen da, edo hobeki erranik, [*-tuko* / *-turen* + *izan* / **edun*] perifrasia, *ahal* eta *ezin* partikulez lagundurik, ahaleraren esparrura hedatzen da. Delako berrikuntza lapurtera (EZ, ES) goi-nafarrera (El) eta zubereraz (Mst) lekukotzen da.

(108) **Ecin ardiatsiren du** nihoiz errepausuric (EZ *Man* I, 99)
(109) Araguia **ecin** [a]**partatuco degu** guregandic (Iraz 44)
(110) Cihaur egon cite lehenic bakian, eta guero bestiac hartan **eçariren ahal dutuçu** (Mst 95)

Azkenean, aldaketarik batere izan ez duen ahalera, hipotetikozkoa da. Aurreko (eta ondoko) garaietan bezala, trinkoak eta [aditzoina + **edin* / **ezan* + *-te* / *-ke*], [aditzoina + **iro*] (GN, L, BN, Z) eta [partizipioa + *egin*] (B, A, G) perifrasiak baizik ez dira erabiltzen hipotetikozko ahalera adierazteko. Aditz jokatuek —trinkoak eta perifrasietako laguntzaileak— hipotetikoko morfologiari eusten diote.

(111) Çu gabe **eniteçu içan**, ecetare bici çoure bisita gabe (Mst 347)
(112) Gorpuz baco Espiritubat, gauza ain admiretacoa, cein **ecin pensadu leian** nolangoa dan (Arz 25)

Bukatzeko, aztergai dugun garaian ere *egin*-en adizkiak urriak dira ahaleran. Haren ordez, zenbait euskalkitako autoreek **idi* aditzarenak erabiltzen dituzte —besteak beste, EZ, ES, Kap, Mik—. Halere, ez dirudi *egin* aditzaren supletibo horrek Euskara Zaharraren muga gainditu zuenik.

(113) Sathan gaichtoac orduan hirria gora **daidi** (EZ *Man* I, 55)
(114) Esteusut **esan sedeguidisula** ecarri orrelaco comparaçiñoyric? (Mik 12v)
(115) Aynbat zeinda eguiac Iaungoicoen esanac, ceyn eta **engañadu ezin leidin**, eta ez gu engañadu (Kap 25)
(116) ecin bertce **daidiquegu** (ES *Hats* 238)

**d) Baldintza**

Euskara Zaharrean zehar, baldintzak berrantolaketa handia nozitu du.

Lehenik, baldintza errealean, protasian oraineko gertakari burutugabea adierazteko forma aldatu da. XVI. mendean, oraineko trinkoez aparte, euskalki guztiek [aditzoina + **edin* / **ezan*] eta [partizipioa + *egin*] perifrasiak erabiltzen zituzten. XVIII. mendearen lehen erdirako, hau alde bat utzi eta [*-t(z)en* + *izan* / **edun*] oraineko forma perifrastikoa baizik ez dute erabiltzen bizkaiera (Urk), gipuzkera (OA, Iraz), goi-nafarrera (El, *GNSerm*) eta zubererak (Mst) (117-118). Etxeberri Sarakoa eta Barrutia lekuko, lapurterak eta bizkaieraren ekialdeko aldaerek baizik ez dute forma zaharra atxikitzen, forma berriarekiko lehian izanik ere (119-120).[37] Aurreko garaian bezala, apodosian, [*-tuko* / *-turen* + *izan* / **edun*] perifrasia da arruntena baldintzaren ondorioa solasunearen ondotik etortzekoa denean. Lapurteraz (ES) eta zubereraz (Mst), han-hemenka, *-te* / *-ke* atzizkidun forma trinkoak ere biltzen dira balio ber horrekin (121-122).

(117) Onegaz **alcanzetan dira** beragaiñic mesedè, dá benifizio andiac […] **errezetàn bada**, emen esango dirian condizinoacáz (Urk 6)
(118) **Restituitcen ez badeb**, **bear deb** remedioric bague **condenatu** (OA 166)
(119) **Ossa banadi** / laster da ondo **egingo deusat** (Bar 277)
(120) **Baldin** bat bederac ongui **pisa eta considera badetça**, esperantça **dut** eztituela soberetsico (ES Hats 273)
(121) baldin menturetan **guertha badadi** hetaric ilkhitcera janhari çapporetsua, **eztate** ene izpirituco agudeciaz (ES *Hats* 284)
(122) *Çoure* arraçoun gagnen, edo adrecian haboro **bermatcen bacira**, ecieç Jesu Kristen berthutiari çor duçun obediencian, bekhanki eta berant **cirate** guiçon arguitubat (Mst 36)

Baldintza irreal edo hipotetikoak gertakari irrealei egiten die erreferentzia; hortaz, adizki jokatuak —trinkoa eta perifrasietako laguntzailea— hipotetikozko morfologia du. Burutu / burutugabe bereizketa aspektuala du bere baitan; ondoko lerroetan

37. Forma zaharra 20 aldiz eta berria 27 aldiz zenbatu ditugu Etxeberri Sarakoaren testuan; Barrutiak, berriz, [aditzoina + **edin*] eta [partizipioa + *egin*] perifrasiak baizik ez ditu erabiltzen, hiru aldiz.

bakoitzaren adierazpideak aztertuko ditugu. Euskalki guztietan, baldintza irreal burutuak [partizipioa + *izan* / **edun*] perifrasia du forma nagusia protasian (123-124). Honez gain, nahiz eta maiztasun apalagoarekin, gipuzkera (Lub), lapurtera (ES), eta zubererak (Mst) perifrasi birkonposatuak erabiltzen dituzte (125). Garai honetan biltzen ditugu iraganeko baldintza burutuaren eta baldintza irreal burutuaren protasien arteko nahasketaren lehen adibideak (126-127), Maister eta Elizalderen testuetan (*ez bazenu ikasi* → *ez bazenuen ikasi*; *utzi balute* → *utzi bazuten*).[38] Hau litzateke Euskara Arkaikotik urruntzen den ezaugarri bakarra, baldintza irreal burutuari dagokionez.

(123) mintçoric eta hitzcuntçaric **içan ez baliz** gure artean, nola **bicico guinen** mundu hunetan? Munduac nola **iraunen çuen**? (ES *GC* 6)

(124) **Sarthu bacina** behin ounxa Jesusen bihotcian, eta **goçatu baçunu** haren amourio suç betheric aphur bat: ordian **etçunuke** acholic cihauren ounxa, edo gaiçki içatiaç: bena alaguera **cinteke** lehenago laido eman deitcienetçaç (Mst 91)

(125) niq **imitatu izan banu** «yo hubiera imitado» (Lub 146)

(126) **Jalki içan eçpacina**, eta **eçpaçunian** deusere berrietaric **ikhassi**, hobekiago **egon cinantekian** bake houn batetan (Mst I, XX, 8)

(127) Batec **eraman baliz** Sagrarioco Ostia guciac, orduan **egoin lizaque** Sagrarioan Christo? Ez jauna: cergatic orduan estago Sacramenturic. Eta **utci bazute** forma erdibat? Orduan bay, cergatic erran dugu Christo dagola parte gucietan (El 55)

Baldintza irreal burutugabeaz den bezainbatean, XVI. mendeko euskaran [aditzoina + **edin* / **ezan*] eta [partizipioa + *egin*] perifrasiak ziren protasiko forma arruntenak. Euskara Zaharraren azken garairako, [*-tuko* / *-turen* + *izan* / **edun*] perifrasiaren onetan baztertu dira gipuzkeraz (OA, Iraz) (128-129). Goi-nafarrera (El, *GNSerm*) eta zuberera (Mst) kontserbatzaileenak dira, [aditzoina + **edin* / **ezan*] baizik ez dutelako erabiltzen (130-131). Etxeberri Sarakoaren datuek erakusten dute lapurteraz aldaketa bidean zela, bizkitartean, [*-ten* + *izan* / **edun*] perifrasiaren faboretan (132).[39] Edozein kasutan, hizkera guztietan forma trinkoekiko banaketa osagarrian dira (133). Apodosian, forma trinkoaz aparte (128), [*-tuko* / *turen* + *izan* / **edun* + *-te* / *-ke*] perifrasia baizik ez dute

38. Bizkaiera (Lekeitio, Bermeo, Barrika), goi-nafarrera (Baztango euskara) eta gipuzkera modernoetan iraganeko formek hipotetikozkoak alde bat ordezkatu dituzte baldintza hipotetikoko protasietan (Oyharçabal 1987: 581-582). Zubereraz aldaketa horren lehen urratsak horretan gelditu ziren.

39. Ezin dugu bizkaieraren joeraren berri eman, Urkizu eta Arzadunek ez dutelako baldintza hipotetiko burutugabearen adibiderik ekartzen. Halere, Lazarragaren datuak ikusirik, uste dugu gipuzkerarekin bat zetorkeela.

erabiltzen Urkizu bizkaitarrak, Otxoa Arin eta Irazusta gipuzkoarrek eta Elizalde nafarrak (129, 134). Ekialdeko mintzoak kontserbatzaileago agertzen dira. Maister zuberotarrak eta goi-nafarrerazko lehen sermoiaren autoreak [aditzoina + **edin* / **ezan* + *-te* / *-ke*] eta [aditzoina + **iro*] perifrasiak baizik ez dituzte erabiltzen apodosi horietan (130, 135). Lapurteraz, berriz, azken perifrasi hauek nagusi dira, nahiz eta [*-tuko* / *-turen* + *izan* / **edun* + *-te* / *-ke*] perifrasia ezagutu eta erabili (ES).

(128) Aizquenic **eguingo balitu** ere Santu guciac eguin cituzten penitencia guztiac baño andiagoac, ez **leducaque** orregatican ere remediorican batere (OA 166)
(129) Pecatu mortalean dagoana **aurquituco baliz** iltceco peligroan, eta confesore gabe nola **libratuco lizateque** pecaturic? (Iraz 63)
(130) Cer caso **eguiñ guindiro** orai emen **xari baledi** Sn Paulo predicacen? (*GNSerm* 2)
(131) **Orhit bacinte** ardurago hiltciaç, ecieç biciaren lucetarçunaç, duda gabe su habororeki hounialat **utçul cinteke** (Mst 60)
(132) Baldin bere baithan ausnar **eguiten balute**, eguiaz **eçagut leçaquete** irrigarri eta laidagarri direla (ES *Hats* 222-23)
(133) **Balijoaz** confesatcera persona bi […] eta biac **ilco balirade** confesatu baño leenago, Contricioarequin dijoana **salvatuco lizateque**, eta **condenatuco lizateque** atricioarequin dijoana (Iraz 62-63)
(134) Bada batec **jan balez** bi libera Ostia Consagratuac, **elizateque sustentatuco**? (El 55)
(135) Ourthe oroç bicio bakhotchbat çagnetaric **idoki bagueneça**, sarri complitu **guertha guinteke** (Mst 26)

### *3.4.4. Aditzen erregimena*

Euskara Arkaikoan bezala, XVII. mendeko euskalkietan, aditz andana batek NOR-NORI alineazioa du, «igorlea» absolutiboan eta «destinatzailea» datiboan izanik (*behatu*, *atxiki*, *eutsi*, *jarraiki*, *lagundu*, *segitu*, *eskatu*, *suplikatu*…).

(136) **Esca badaquidaz** (*EgiaK* 66)
(137) **Baçaquioz** virtuteari beti **jarraitu** / santuçat Iaungoicoa ecussi daiçu (*EgiaK* 190-91)
(138) Zein gauza **lagunduco iacu** castidadea goardeetaco? (Kap 50)

XVIII. mendearen lehen erdirako, haien argumentu egitura aldatua da. Iparraldeko euskalkietan, ekintza aditzen gisan eratuak dira, argumentu bat ergatiboan eta beste bat absolutiboan dutela (absolutibo → ergatibo, datibo → absolutibo): *jarraiki natzaio* → *jarraiki dut*. Aldiz, Hegoaldeko hizkeretan ergatibo-datibo alineazioarekin agertzen zaizkigu (absolutibo → ergatibo, datibo → datibo): *jarraitu natzaio* → *jarraitu diot*.

(139) **Escacen dugu** (El 45)
(140) Cerc **lagunduco digu** casto izateco? (El 49)
(141) **Lagun gaitçatçue** lagun gueuroc moian vtciez (EZ *Man* I, 122)

### 3.5. Sintaxia

Euskara Zaharrean, hizkuntzaren aldaera jasoa landu zutenek joskera zabalagoa ere eskaini zuten: perpausen luzetasuna eta mendeko perpausen oparotasuna dirateke Axular, Etxeberri Sarakoa eta Maisterren sintaxiaren bereizgarriak. Hemen, estiloarekin eta eraikuntza literarioarekin zer-ikusia duten horiek ez ditugu aztertuko. Bai, aldiz, hizkuntzaren joskerak izandako aldaketa zenbait.

#### *3.5.1. Hitz-ordena*

Euskararen garairik zaharrenetan, gaur egungo euskaldun bati arraroak gerta dakizkiokeen hitz-ordenak lekukotzen dira. Hemen, izen-sintagmaren eta erlatibozko perpausen kasuak baizik ez ditugu aipatuko.

Lehenik, izenlaguna, genitiboan doana, osatzen duen izenaren ondotik ager daiteke. Kasu horretan, izena mugagabean dago, eta genitiboko sintagmak hartzen du hondarkia. Osagaien ordena horren lekukotasunak nasaiak dira aztergai dugun garaian. Bizkitartean, iduri luke ordurako ordena zaharkitua zela, biltzen diren adibide gehienak otoitzetan fosilizaturik bezala agertzen baitira.

(142) Jaungoycoac salva zaitzala Erreguina, misericordiaren Ama, **vicitza, dulzura, eta esperantza gurea** (Iraz 5)
(143) Passatu çuen **Passio dolorescoa** (Ber Dotr 85v)
(144) **Aita gurea,** çeruetan zagoçana, santificadu dila çure içena (Kap 4)
(145) **Phelippe Hespañaco** (*EgiaK* 1)

Gisa berean, gerta liteke erlatibozko perpausa osatzen duen izenaren ondotik kokatzea; aldi honetan ere, izena mugagabean dago eta erlatibozko perpausaren adizkiari eransten zaio hondarkia. Hurrenkera hori emankorra da Euskara Zaharrean, bereziki bi muturretako hizkeretan, bizkaieraz (Mik, Bar), eta goi-nafarreraz (Ber) eta zubereraz (Bp, Mst, Etxt), hain zuzen.[40]

---

40. Ordena horrek Euskara Zaharraren ondotik iraun zuen hizkera horietan (ik. ondoko kapitulua). XIX. mendean, bizkaiera (Añibarro, Mogel), gipuzkera (Larramendi, Mendiburu, Lardizabal), behe-nafarrera (Salaberri, Ibarnegarai) eta zubererazko testuetan aurkitzen da, eta XX. mendean, Aezkoan, Zaraitzun eta Erronkarin (Camino 2008: 125).

(146) **ogui beti dirauena** / eçarten da may ontan (Irñ 1609, 163-164) 'beti dirauen ogia'
(147) Erreciuidu daguiala **sacrificio celebretan dabena** (Kap 143) 'Errezebi dezala zelebratzen duen sakrifizioa'
(148) Gaiça miragarria, **sinheste merechi diana** eta guiçonaren entheleguia beno gorago dena (Mst 344) 'Gauza miragarria, merezi duena sinestea, eta gizonaren adimena baino gorago dena'

### *3.5.2. Objektua genitiboan*

Euskara Arkaiko eta Zaharrean, aditz-izena buru duten sintagma edo perpausen osagarria genitiboan agertzen da. Beste gisa batez erranik, aditz-izenak bere izen tasunak atxikitzen ditu, eta osagarria, edozein izenlagunen gisan, genitiboan markatzen da.

Halere, lehenbiziko lekukotasunetatik, araua ez da beti tinko betetzen Arabako euskaraz, bizkaieraz eta gipuzkeraz, hauetan, osagarria absolutiboan ere ager daitekeelako. Euskara Zaharrekoak dira euskalki hauetan bilduriko azken lekukotasunak, zehazkiago, 1800 aitzinekoak. Erabilera honek gaur egun arte iraun du lapurtera, behe-nafarrera, zubereraz eta Nafarroa Garaiko ekialdeko hizkeretan (Camino 2011: 104).

(149) eroan naguiçu ceure vistara, eta **gloria celestialen goçaetan** ceure misericordiagatic (Kap 155)
(150) estu egongo aiz **oen glosacen**; / Ançarac vaceaquic deadarr eguiten; / Salamancaco çuloan egondu inçan icasten; / Hicaragoa aiz **oen egu<i>ten** (TBI, *TAV* 127)
(151) argatic zaite jarri […] ciñatcera […] aoan libratceagatic **it**[**ç**] **gaiztoen esatetic** (Iraz 2-3)
(152) goacen Mairu errira / **Mairuen zaticen** / mendi Adlateraño / guztia errecen (It 85-88)
(153) Trabaja ezquindecen gatic / **Gari onen beregitçean**, / vltçituric eman çigu / Gurutçeco larrañean (Irñ 1609, 145-148)
(154) **zor gucien pagaceco** (Ber *Doc* 108r)
(155) Erranen dut noiz assi ciren jendeac **amarren eguiten** (*GNSerm* 5)

### *3.5.3. Linschmann-Aresti legea*

Euskararen testurik zaharrenetan, genitibo bihurkaria erabiltzen da izenordain horrek aipatzen duen pertsona perpaus berean baldin badago, perpauseko aditzaren argumentu gisa —NOR, NORI edo NORK argumentua bada, alegia—. Aldiz, izenordain arruntera jotzen da aipatzen den pertsonak perpausean ez badu argumentu erreferentziakiderik.

Euskara Zaharrean zehar, legea ahultzen hasten da. Oro har, erran daiteke aldaketa gipuzkera eta lapurteraren eskutik heldu zaigula. Etxeberri Ziburukoak eta Axularrek

legea salbuespenik gabe betetzen badute ere (156), haien eskualdekide diren Argainaratz, Etxeberri Sarakoa, Harizmendi, Pouvreau eta Urtek urratze asko dakartzate (157). Otxoa Arin gipuzkoarraren hizkeran galdua dirudi (158). Bizkaieraz eta goi-nafarreraz, berriz, oro har, legea ongi betetzen da aztergai dugun garaian (Mikoleta eta Kapanaga, Beriain eta Elizalde lekuko) (159, 160). Aldaketaren norabideari dagokionez, erran behar da, urratzerik gertatzekotan, Mendebaldean (B, G) izenordain indartuaren alde egiten dela (158, 161), eta Ekialdean (L, BN, Z), genitibo ahularen alde (157) (Sarasola 1980).

(156) Consolatceintugu **gueure** buruoc (Ax 73)
(157) othoitzez gagozkitzu Iesu Kristo **gure** Iaunaren amaz orhoitzen garenok (Hm VI)
(158) Arquitcen ote da Eleiza onetan **gueuren** pecatuen barcacioraco remedioric? (OA 43)
(159) Da gauza ciertoa barcatudizquiçula **çeure** becatu guciac (Ber Trat 108)
(160) Cerren **çeure** Curuce santeagaiti mundua erredimidu cenduan (Kap 131)
(161) Iesus **neure** Iauna içandila nigaz (Kap 125)

### 3.6. Lexikoa

Geroago ikusiko dugun bezala (§ 5), Euskara Zaharrean hiztegien ekoizpena handitu zen eta, ondorioz, lexikoaren errepresentazio zabala dugu. Hiztegi hauetarik gehienek (euskara-islandiera hiztegitxoak, Voltoire, Mikoleta, Pouvreau, Harriet) lehen lekukotasun franko ekartzen dute —Sarasolaren (1997) arabera, 1.800 hitz inguru—. Hauen artean, hitz bakun eta arruntak izanik ere, asko eratorri eta hitz-elkarketak dira. Izan ere, garai honetan hiztegigileak (besteak beste, Pouvreau, Urte edo Harriet) lexiko berrikuntzan ari dira erdal hitzen euskal ordaina eman beharrez. Adibidez, Pouvreauren hiztegiko A eta B letren eratorri eta konposatu berrien proportzioa % 68 eta % 67koak da, hurrenez hurren. Halaber, Urtek, *acceptabilis* sarreraren ordain gisa, *hargarria*, *agradagarria*, *maitágarria*, *onhetsgárria* eratorriak ekartzen ditu.

Maileguen baztertzeko eta ordezkatzeko joera aztergai dugun garaian agertzen da. Eginmolde horren ordezkaririk sutsuena Martin Harriet dugu, maileguak baztertzeko aholkua ere ematen baitu bere gramatikan, «Escualdunei gomendioa eta Abisua» izeneko atalean:

> Berce parte da escualdunec berce hitzcuncetaric hartuac dituzten hitcen khenceco hala nola, *intencionea / chedea, inclinacionea / pendura, inquietatcea / khechatcea, ingrata / esquergabea &c*. Lehenbicicoac berce hitzcuncetaric dire eta berceac escuara dire.

Halere, hiztegia zaindu eta lantzeko ardura ez zen soil-soilik hiztegigileen esku gelditu. Izan ere, hizkuntzaren aldaera jasoa landu zuten haiek lexikoa egokitzeko ahaleginak

egin zituzten. Esate baterako, ezaguna da Etxeberri Sarakoak hitz berrien alde zuen joera, erdaren ordain jatorrak ekartzeko (*alosia*, *komunztadura*…). Bestalde, ezaguna da idazkera lantzearen ondorio zuzena dela hitz elkartu eta eratorrien ugaritzea. Hori bera ikusten dugu Lapurdiko idazleen lanetan: Axular eta Etxeberri Ziburukoa eratorri eta elkarketa gehien ekarri duten autoreak dira (Sarasola 1997). Azkenik, oro har Sarasolak (1997) egin zenbaketaren arabera, 2.300 inguru dirateke aztergai dugun garaian literatura-lanetan agerturiko lehen lekukotasunak. Pouvreauren hiztegia garai hartan landu zen lexikoaren isla dugu, haren nomenkaturaren %92 —eratorri eta hitz elkartuak nagusi dituena— ordu arteko literatura-lanetan oinarritua baita (Etxagibel 2008).

### 3.7. Laburbilduz: Euskara Arkaikoa eta Euskara Zaharra bereizteko

Lakarrak (1997b) 1600 aurreko eta ondoko euskara nabarmenki desberdina zela ikusirik, data horretan kokatu zuen Euskara Arkaikoaren eta Euskara Zaharraren arteko mugarria. Haren erranetan, «1600etik aurrera (salbuespenak salbuespen) ez da aoristorik, bokal sudurkariak ekialdetik landa ia desagertu dira, adizkietako kontrakzioak orduantxe hasten dira agertzen, sintetikoak ugari dira eta mendebalean oraindik *-rean* ablat. eta *-ti* prosekutiboa bereizteaz landa, hastapenetan dago txistukari neutralizazioa» (1997: 516).

Azken hogei urteetan, euskararen historiako garairik zaharrenak hobeki ezagutzeko ahalegin handiak egin dira, hala testuak editatuz (ik. §2) nola hizkuntza zaharraren deskribapenak burutuz (Camino 2008, 2011; Manterola 2015; Mounole 2011a; Zulaika 1998). Lan horiek oro, Lakarraren periodizazioko bi garai hauek baiesteaz landara, argumentu linguistiko berriak ekarri dituzte proposamen horren alde.

Bi garai linguistiko bereiztearen oinarrian, arkaismoak eta berrikuntzak jarri ohi dira. Arkaismoek berebiziko garrantzia izan arren, ez dute berrikuntzen pisu eta indar bera garaiak bereizteko, preseski arkaismoek garai berriez haratago iraun baitezakete, periodizazioko garaien egokitasuna zalantzan ezarri gabe. Berrikuntzek, berriz, garai berriak argiki mugatzen eta definitzen dituzte. Alabaina, aldaketa guztiek ez dituzte ez data berak ezta erritmo berak ere. Hortaz, garai bat definitzen dituzten berrikuntzak haren hastapenekoak izan daitezke edo garai horretan zehar burututakoak; edozein kasutan, batak zein besteak delako garaiaren bereizgarriak dira. Aldaketen erritmoak direla kausa, garai batean hizkerek hizkuntz egoera desberdinak izan ditzakete. Zehazkiago, aldaketa burutua erakusten dute hizkera batzuek, aldaera zaharra begiratzen dute besteek. Halakoetan, berrikuntza da garaiaren bereizgarria, ez arkaismoa, garai horretako hizkera batzuen ezaugarria izanagatik ez baitaiteke erabil bi garai bereizteko (preseski aurreko garaiak ere baduelako). Ohartzen gara hizkera guztietako eta garai guztietako testuak esku artean izan gabe berrikuntzei datak ezartzearen arriskuaz. Baina

halabeharrez testuek eskaintzen dizkiguten datuekin lan egin behar dugu, testu berriak agertuko direnean gure datak eta kronologiak findu eta zehaztuko ditugulakoan.

Atal honen helburua Euskara Arkaikoa eta Euskara Zaharra zertan bereizten diren zehatz erratea da. Horretarako, eta lehen eman diren arrazoiengatik, Euskara Zaharrean agertu berrikuntzak aipatuko dira arkaismoak bazter utzirik; dena den, garai bateko eta besteko arkaismoen berri nahi duenak kapitulu bakoitzaren deskribapen linguistikoan aurkituko ditu.

Euskara Zaharrak aldaketa guti dakar fonologian (beheko (1-2)), izenaren morfologian (beheko (3)), eta sintaxian (beheko (32-34)). Gehienak aditzaren morfologiak eta aditz-sistemak dakartzate (beheko (4-31)). Ororen buru, Euskara Zaharraren bereizgarri diren 34 berrikuntza aurkitu ditugu. Hona zein diren:

1. Arazo grafikoak tarteko, iduri luke Euskara Zaharrean afrikatuaren aldeko neutralizazioa gertatu zela ozenen ondoan, aurreko garaian frikaria nagusi zelarik (5. kap. § 3.2.2.3).
2. Txistukari bizkarkari eta apikarien arteko neutralizazioa bizkaieraz (§ 3.2.2.2 eta 5. kap. § 3.2.2.3) —nahiz eta aldaketa horren lehen zantzuak izan Euskara Arkaikoan—.
3. *Ae* > *e* bokal multzoaren soiltzearekin batera, bizkaierak aurreko garaian zeukan singular/plural bereizketa galtzen du genitiboan, bietarako *-en* erabiliz (§ 3.3.3.1 eta 5. kap. § 3.3.3.1) —azentuak bereizten zituzkeen bizkaiera modernoan bezala—.
4. Mendebaldeko hizkeretan aditzoinaren desagertzea partizipioaren onetan. XVII. mendean zehar aditzoinaren azken arrastoak ditugu; XVIII. menderako aldaketa erabat burutua da (sartaldeko bizkaieraz izan ezik, Barrutia lekuko) (§ 3.4.1).
5. Mendebaldeko hizkeretan **ezan* laguntzailearen edo, hobeki erranik, [aditzoina + **ezan*] perifrasiaren desagertzea. XVII. mendean zehar perifrasi horren azken arrastoak ditugu; XVIII. menderako aldaketa erabat burutua da (sartaldeko bizkaieraz izan ezik, Barrutia lekuko) (§ 3.4.1).
6. GNz, Gz eta Lz, *-n*-z bukaturiko partizipioei *-tu* atzizkia hedatzea garai honetakoa da (*izatu*/*izandu*; *egotu*/*egondu*) (§ 3.4.1) —gutxienez hala iduri luke euskalki hauen aurreko garaiko lekukotasunen eskasia gogoan izanik—.
7. Aditz-izenaren forma aldaketa. Lk eta GNk *-tze* zabaltzen dute *-i* partizipio-marka duten aditzetara (*etortze*, *erortze*); halaber, Bz eta Gz, partizipioaren gainean eraturiko formak agertzen dira (Bz *-ite*, *-tute*; Gz *-itze*, *-tutze*). Horrez gain, *-ite* desagertzen da hizkera gehienetarik (B, G, GN, L) (§ 3.4.1).

8. Ondare zaharreko aditzen *e-* aurrizkia, *i-* asimilatua da euskalki gehienetan (*ekusi* > *ikusi*) (§ 3.4.2).
9. *Zuek* pertsonaren aditz-komunztadura XVIII. mendearen lehen erdian finkatzen da Bz eta Gz (§ 3.4.2a).
10. *-z* pluralgilearen hedatzea (§ 3.4.2c).
11. *-ke* atzizkiaren hedatzea eta *-te-*ren leku hartzea (osoki ordezkatuz edo *-teke* morfema sortuz). Halere, aldaketa ez da bururaino eramana (§ 3.4.2d).
12. Trinkoen funtzioak urritzen dira eta aditz askok beren jokabide trinkoa galtzen dute (§ 3.4.3).
13. Lehen kontrakzioak agertzen dira adizkietan (§ 3.4.3).
14. Elizalderen dotrinatik aitzinako testuak lekuko, GNk **erazan* laguntzailea galtzen du. XVII. mendean oraindik bizirik da (§ 3.4.3).
15. Iraganeko trinkoek balio burutua edo perfektiboa adierazteko gaitasuna galtzen dute XVII. mendean zehar. XVIII. menderako balio burutugabera mugatzen dira (§ 3.4.3.1b).
16. [aditzoina + **edin/*ezan*] eta [partizipioa + *egin*] perifrasiak iragan burutuaren eremutik desagertzen dira. Erabilera horren azken arrastoak badira XVII. mendean (§ 3.4.3.1b).
17. Perifrasi horiek mendeko perpaus zenbaitetara mugatzearen ondorioz, subjuntiboa sortzen da (§ 3.4.3.2a).
18. Horrekin batera, trinkoak mendeko perpaus jakin horietatik desagertzen dira, *subjuntibo trinko* gisa izendatu ohi den erabilera desagertzen da (salbu Lz eta Zz) (§ 3.4.3.2a). Horren azken arrastoak ditugu XVII. mendean euskalki guztietan (§ 3.4.3.2a).
19. [partizipioa + iraganeko *izan/*edun*] iragan burutuko forma nagusia bihurtzen da euskalki guzietan (§ 3.4.3.1b).
20. [partizipioa + oraineko *izan/*edun*] iragan burutu gisa gramatikalizatzearen lehen arrastoak ditugu Lz eta Zz (§ 3.4.3.1b).
21. Mendeko perpausetan, 3. pertsonako adizkiek, *l-* beharrean, *z-* edo ø- aurrizkidun adizkiak erabiltzen dituzte perpaus nagusiko aditza iraganean izanez geroz (Z salbuespen) (§ 3.4.3.1b, eta 5. kap. § 3.4.2f).
22. [Partizipioa + *joan/eroan, eraman*] ohiturazko perifrasia hizkera gehienetarik desagertzen da (B salbu) (§ 3.4.3.1c).
23. Geroaldiko forma trinkoak hizkera gehienetarik desagertzen dira. Halere, XVII. mendean oraindik bizirik dira (§ 3.4.3.1.d).
24. [partizipioa + oraineko *egin*] perifrasia ez da gehiago erabiltzen geroaldia adierazteko. Erabilera horren azken arrastoak XVII. mendekoak dira (§ 3.4.3.1.d).

25. *-a(n)* atzizkidun adizkiak desagertzen dira geroaldiaren eremutik (5. kap. § 3.4.3.1d).
26. Aginteran *d-* aurrizkidun formak agertzen dira GNz eta Lz (§ 3.4.3.2b).
27. GNz, Lz eta Zz [*dugun* + aditzoina] jusibozko egituraren agerrera (§ 3.4.3.2b).
28. Ahaleraren berrantolaketa: orainean eta iraganean, [partizipioa + *izan/*edun*] agertzen da Bz, eta [*-ten* + *izan/*edun*] Zz. Geroaldiko ahalera sortzen da GNz, Lz eta Zz (§ 3.4.3.2c).
29. XVIII. menderako, Bz, Gz, GNz eta Zz [*-ten* + *izan/*edun*] erabiltzen da baldintza errealeko protasian (L eta B sortaldea salbuespen). XVII. mendean, [aditzoina + **edin/*ezan*] perifrasiaren erabileraren azken arrastoak ditugu testuinguru horretan (§ 3.4.3.2d).
30. Iraganeko baldintza burutuaren eta baldintza irreal burutuaren protasien arteko nahasketaren lehen adibideak Zz eta GNz (§ 3.4.3.2d).
31. Baldintza irreal burutugabeko protasiaren berrantolaketa. XVIII. menderako, Gz [*tuko* + *izan/*edun*] erabiltzen da, eta Lz [*-ten* + *izan/*edun*] (GN eta Z kontserbatzaileak). XVII. mendean, [aditzoina + **edin/*ezan*] oraindik nagusi da hizkera gehienetan (§ 3.4.3.2d).
32. ABS-DAT alineazioko aditzak urritzea eta ABS-ERG eta DAT-ERG alineazioak hedatzea Iparraldean eta Hegoaldean, hurrenez hurren. Delako aldaketa XVIII. mendearen lehen erdirako burutzen da (§ 3.4.4).
33. *To-gen* edo aditz-izena buru duten sintagma edo perpausen osagarria genitiboan markatzeko joera desagertuz doa mendebalde eta erdialdean. A, B eta Gz erabilera horren azken arrastoak 1800 aitzinekoak dira (§ 3.5.2).
34. Gz eta Lz Linschmann-Aresti legearen galera Euskara Zaharrean zehar (Bz eta GNz ongi eusten zaio) (§ 3.5.3).

Berrikuntza horiek eta bereziki haien kopuruak Euskara Arkaikoa eta Euskara Zaharra bereizteko beharra sendotzen dute. Halaber, bi garai hauen arteko muga kokatzeko zailtasuna agerian uzten dute aipatu 34 berrikuntzetatik 13 XVIII. mendearen lehen erdikoak baitira (zerrendako 4, 5, 9, 14, 15, 16, 18, 23, 24, 29, 31, 32, 33 berrikuntzak).

## 4. EUSKAL HERRIETAKO BESTE HIZKUNTZAK

Estatu modernoen sortzearekin batera, herri-hizkuntzak nazio-hizkuntza bilakatu ziren, gaztelania Gaztelako Erreinuarena, eta frantsesa Frantziako Erreinuarena.

XVII eta XVIII. mendeetan, bi hizkuntza horiek idatzi ofizialetako hizkuntza bakarrak dira. Halere, galda genezake orduan zenbatetaraino erabiliak ziren eguneroko bizian.

Kapitulu honetako lehen atalean ikusi dugu jende gehienak euskaldun elebakarrak zirela; aldiz, Florentziako Philippus bidaiari italiarrak elebidun asko ezagutu zituela diosku:

> Il linguaggio che si usa nel suddetto spazio di paese, fino a Baiona, addimandasi parlar basco, che credo sia il medesimo, o poco differente, dal biscaglino. Ma, per esser questi popoli, si può dire, in mezzo tra la Spagna e la Francia, vi sono moltissimi che, per rispetto del traffico, intendono e parlano l'uno e l'altro idioma, cioè il francese e lo spagnolo. [Herriaren hegoaldean Baionaraino erabiltzen den hizkuntza «basco» deitu ohi da, «biscaglino» bezalakotsua dena. Baina herri hau, nolabait esateko, Espainiaren eta Frantziaren artean egonik, asko dira, merkataritza dela-eta, hala mintzaira bata nola bestea ulertzen eta hitz egiten dutenak, hau da frantsesa eta espainiera.] (1693, *apud* Oroz Arizcuren 1977: 318)

### 4.1. Bearnesa

Erran bezala (ik. § 1.2.1), XVII. mendearen hastapena arte, Nafarroako Erreinuko idazki ofizial guztiak bearnesez idatzi ziren.

XVII. mendearen bigarren erditik aitzina, berriz, bearnesaren erabilera testuinguru ofizialetatik gibelatu zen, frantsesaren onetan. Izan ere, Nafarroako Erreinua Frantziako Koroarekin bateratzeko asmoarekin, Luis XIII.ak batasun ediktua —«Edit d'Union» gisa ezaguna dena— plazaratu zuen 1620an, eta ordutik aitzina dokumentu guztiak frantsesez idatzi zituzten (Goihenetxe 1983: 252).

### 4.2. Frantsesa

XVII eta XVIII. mendeetan, frantsesa Lapurdi, Nafarroa Beherea eta Zuberoako administrazio eta justizia hizkuntza bakarra da.[41] Halere, Oihartzabalek (2001b) oroitarazi bezala, haren erabilera luzaz mugatua zatekeen: XVIII. mendera arte Iparraldeko biztanleek Euskal Herritik atera behar zuten frantsesa ikasteko, ordura arte latina izanik haien kultur hizkuntza (ik. § 1.2.2) (Oihartzabal 2001b).

XVII. mendearen bigarren erdian frantsesaren presentzia handitzen hasten da, Bidegarairen hiztegi hirukoitz galduak (1675 inguru; ik. § 5.5) eta Harrieten gramatikak (1741; ik. § 5.2), biak euskaldunek frantsesa ikasteko helburuarekin osatuak, aditzera ematen duten bezala. XVIII. mendearen hastapenean, frantsesa erreferentziazko hizkuntza bilakatua da kulturaren esparruan. Gainera, haren irakaskuntza gizarte maila ertaineko jendeen artera ere aitzinatzen da (Oihartzabal 2001b: 13-22). Lehen erran bezala (ik. § 1.2.2), horrek ondorio larriak izan zituen euskarazko liburuen ekoizpenean.

---

41. Lapurdi eta Zuberoan 1539ko Villers-Cotterêts-eko agiriaren ondotik (ik. aurreko kapitulua, § 1.4.5).

### 4.3. Gaztelania

Fernando III.ak (1217-1252) gaztelaniari administraziorako ofizialtasuna eman zion (ik. aurreko kapitulua, § 1.4.4) eta XVI. mendean, herri-hizkuntzen aldeko mugimendua indartu zenean, naturalki gaztelaniaren alde egin zen Hego Euskal Herrian ere, egoera diglosiko horretan gaztelania baitzen idatziarekin lotzen zen hizkuntza. Bestela erranik, gaztelania biziki goizik bihurtu zen jakitate eta botere hizkuntza.

Lehen erran dugun bezala (ik. § 1.3), XVI. mendeaz geroztik, irakaskuntza-sare garrantzitsu bat zegoen Hegoaldean, eta gaztelania zen ikasteko hizkuntza.

### 4.4. Latina

Lehen adierazi bezala, XVIII. mendera arte latina Iparraldeko jendeen kultur hizkuntza izan zen: Oihenartek latinez idatzi zuen bere *Notitia* (1638), eta Etxeberri Sarakoak latina ikasteko gramatika burutu zuen euskaraz (*Escual Herriari eta escualdun guztiei escuarazco hatsapenac latin ikhasteco*). Bidegarairen hiztegiak ere euskal hitzen ordainak latinez eskaintzen zituen, frantsesez eta gaztelaniaz gain.

### 4.5. Beste hizkuntza batzuekiko harremanak: euskara-islandiera eta euskara-algonkin pidginak

Azkenik, XVII eta XVIII. mendeetan ere, arrantzale euskaldunak Euskal Herriko kostatik urrun ibili ziren lanean. Bidaia horien karietara, hainbat populurekin bizi izan ziren; horren ondorioz, euskara latin-erromantzeak ez ziren hainbat hizkuntzarekin egon zen kontaktuan. Duela urte zenbait aurkitu euskara-islandiera eta euskara-algonkin pidginen lekukotasunek hizkuntza ukipen horien berri ematen digute (ik. § 5.4).

## 5. HIZKUNTZA-IDEIAK ETA GRAMATIKOGRAFIA

Berpizkundetik aurrera ez dira falta euskararen defentsan idatzitako lanak, hein handi batean Europako beste hizkuntzen defentsan ere erabilitako ideia eta argudio berak jorratuz eta egokituz (ik. aurreko kapitulua, § 4). Haatik, euskararen alde jarduteko, latinarekiko lehia orokorrari beste arrazoi batzuk gehitu behar zaizkio, hala nola erromantzeekiko egoera diglosikoa, administrazioan eta hezkuntzan estatus ofizialik ez izatea, eta literatur tradizio idatzi sendo baten falta. Dagoeneko, XVI. mendeko lehen apologistek euskararen noblezia eta antzinatasuna frogatu nahi izan zituzten, Iberiar Penintsulako lehenengo hizkuntza, eta bertan orokorra, izan zela aldeztuz. Hala

erdarazko lanetan, nola euskarazko bakanetan (Etxepare edo Axular, kasu), euskaraz idazteko bideragarritasuna eta euskal hitzen izaera filosofikoa ere aldarrikatu ziren.

Alabaina, euskararen idatzizko erabilera justifikatzeko eta ahalbidetzeko aurreneko egitasmo osoak XVII. mendetik aurrera aurkitzen ditugu; hots, apologiaz, gramatikaz eta hiztegiaz osatuak, hurrenkera horretan, Europako gainerako hizkuntza tradizioetan ere ohi bezala. Gisa honetan, euskararen apologiaren nahitaezko zeregina euskaldunei zein erdaldunei hurrengo bi lanen premia ikusaraztea zen; gramatikarena, berriz, euskararen egiturak eta moldeak deskribatzea eta, azkenik, hiztegiaren helburua euskarak orotariko erabileretan behar duen hitz altxorra eskaintzea.

Zoritxarrez, garai hartako baldintza soziopolitikoak ez ziren egokienak halako lanek moldiztegiratzeko behar zuten finantziazioa lor zezaten eta, ondorioz, gehienak osorik edo zatika galdu dira (Bidegarai, kasu) edota, onenean ere, eskuizkribaturik gorde zaizkigu (Etxeberri Sarakoa). Aitzitik, gramatika eta hiztegi lan xumeago batzuk, batik bat hizkuntza irakaskuntzarako eskuliburuetan txertatuak, argitara eman ziren, berehalako interes praktikoa baitzuten.

### 5.1. Euskararen gorazarrea

XVI. mendean bezala, eta arrazoi bertsuengatik, garai honetan ere euskararen gorazarrea egiteko lanak idatzi ziren. Eta aurreko mendean bezala ere, lan haietan erabili ziren euskararen gaineko ideia apologetikoak bi ardatz nagusitan oinarritu ziren: tubalismoa eta kantabrismoa (ik. aurreko kapitulua, § 4.1). Euskara Zaharraren garaiko hiru autore nabarmendu nahi genituzke: Baltasar Etxabe, Arnaud Oihenart eta Etxeberri Sarakoa.

Baltasar Etxabe (Oikia 1548-Mexiko *c.* 1623) Mexikora joan zen 1570 inguruan eta han ospe handiko margolaria bilakatu zen. *Discursos de la antigüedad de la lengua cántabra bascongada* (Mexiko, 1607) izeneko apologia idatzi zuen, non euskara bera mintzo den, euskaldunen aldetik jaso duen tratu txarraz kexatzeko. Etxabek tubalismoa aldeztu zuen; haren xedea euskararen garbitasuna eta handitasuna erakustea zen, Babeldik etorritako 72 hizkuntzetariko bat zela frogatuz eta, halaber, Iberiar Penintsulako lehena eta beste hizkuntzen eraginik gabekoa. Euskara, orobat, literatura, erretorika eta gramatikarako gai dela baieztatu zuen; badirudi, beraz, ez zuela aurreko euskal literatura ezagutzen. Euskararen etorkia eta hedapena frogatzeko, toponimian oinarritutako metodo etimologikoaz baliatu zen. Baina, Garibaik ez bezala eta Pozaren antzera, antzekotasun formalari zenbait toponimoren azalpen kratilozalea erantsi zion. Horrezaz gain, beste metodo bat erabiltzen du: tresna edo jantzi baten izena Penintsula osoan berdina bada, orduan euskal jatorrikoa da.

Arnaud Oihenart (Maule 1592-1668) legegizon, historialari, poeta eta paremiologo zuberotarrak *Notitia utriusque Vasconiae tum Ibericae tum Aquitanicae* historia-liburua argitaratu zuen Parisen, lehenik 1638an eta gero, zuzendu eta emendatua, 1656an. Lehen liburuko XII eta XIII. kapituluetan euskararen antzinatasunaz jardun zuen, ordu arteko autoreek baino askoz ere modu zorrotz eta kritikoagoan jardun ere, jasotako teoriak ez baitzituen besterik gabe onartu. Hasteko, euskaldunen eta kantabriarren identifikazioaren kontra agertzen da, iturri klasikoak azterturik. Oihenarten iritziz, euskara baskoiek eraman zuten barduliar, karistiar eta autrigoien lurraldeetara; beraz, *vascongado* hitza 'euskaldundu' gisa ulertzen duen lehenbiziko autorea izan zen. Euskara Penintsulako lehen hizkuntza izan zen eztabaidan bitarteko jarrera hartu zuen, uste baitzuen euskara ez zela Penintsula osoan hedatu, baizik eta Penintsulako iparralde osoan. Oihenart Ipar Euskal Herriaren antzinako egoeraz arduratzen den orduko autore bakarra da. Pentsatzen du Akitaniako hizkuntza, galiera bezala, erromatarren konkistak galarazi zuela eta euskara eremu horretara ere baskoien erasoaldiekin sartu zela. Horren froga gisa Toursko Gregorioren testu bat aurkezten du, non aipatzen den baskoiek 587. urtean egindako sarraldi bat. Laburbilduz, Oihenarten ustez Euskal Herria baskoien herria besterik ez da.

Sarako Etxeberriren proiektuaren lehen oinarria *Escuararen hatsapenac* (*c.* 1712) izan zen. Etxeberrik Lapurdiko Biltzarrari aurkeztu zion bere lana eta 1727an 3.000 liberako aurrerakina eskatu zuen, inprima zedin; lehenago, 1721-25 bitartean ere antzeko eskaria egin zuen. Ez batean ez bestean, ez zuen laguntzarik lortu eta eskuizkribua inprimatu gabe geratu zen, XX. mende hasieran Julio Urkixok Zarauzko frantziskotarren komentuan aurkitu zuen arte. Zarauzko eskuizkribuak bi parte ditu: lehena *Escuararen hatsapenac* apologia-lana da eta bigarrena, *Escuarazco hatsapenac latin ikhasteco* gramatika-lana. Eskuizkribuaren zati handi bat bi zutabetan antolatzen da: ezkerrekoan euskarazko testua eta eskuinekoan, latinezkoa. Etxeberriren proiektuak bi helburu izan zituen: alde batetik, euskaldunei, bereziki lapurtarrei, latina ikasteko tresnak ematea, gero munduko hizkuntzak errazago ikas zitzaten; bestetik, euskaldunak euskaraz idaztera bultzatu eta horretan laguntzea. Baina, horretarako, apologia-lanean euskara hizkuntza «çaharra, çuhurra, antçatsua edo artificiotsua, garbia, noblea eta bertce hitzcuntcetaric ethorquiric gabecoa» dela frogatu behar du; Etxeberrik erabilitako argudioen artean tubalismoa aurkitzen dugu berriro ere. Lana euskaraz eta latinez idatzia egoteak iradokitzen du bai euskaldunentzat eta baita erdaldunentzat ere idatzi zuela (Bilbao 2006: xxxvi). Etxeberrik hainbat iturri erabili zituen, horietarik asko aitortu gabe eta aipuak maiz bere helburuetara egokituz; guztiarekin ere, bere apologia-lanean Bernardo Aldreteren *Del origen y principio de la lengua castellana o romance que oi se usa en España* (1606) izan zuen eredu nagusia.

### 5.2. Hizkuntza irakaskuntzarako eskuliburuak

XVI-XVIII. mendeetan ugari dira Europa osoan hizkuntzen irakaskuntzarako eskuliburuak, batik bat bidaiariei eta merkatariei hizkuntza baten edo batzuen oinarrizko ezagutza eskaintzeko atonduak. Eskuarki halako eskuliburuak zenbait atalez osaturik zeuden: gramatikaren hastapenak, hiztegiak, dokumentu ereduak, solasak, etab. Lan mota honek Euskal Herrian ere izan zuen islarik: Voltoire-ren *L'Interprect…* (Lyon, *c.* 1620), Mikoletaren *Modo breve…* (1653), Lubietaren *Dicionario en casttellano y bazquence…* (1728), Harrieten *Gramatica escuaraz eta francesez* (Baiona, 1741) eta, ziurrenik, Urteren *Grammaire cantabrique* (*c.* 1714), nahiz eta azken lan hau generoan ohikoa dena baino tamaina handiagokoa eta zehatzagoa izan.

Horrenbestez, euskara sartu zuen halako lehenengo lan ezaguna Voltoire izeneko hizkuntza-maisu gaskoiak argitaratu zuen, Donibane Lohizuneko eta Ziburuko hizkerak erabiliz: *L'Interprect ou Traduction du françois espagnol & basque*. Voltoire-ren hizkuntza-eskuliburuak arrakasta izan bide zuen, XVII. mendean eta XVIII.aren hasieran sarri berrargitaratu baitzen (ik. beherago); garai hartan Ziburuko Etxeberriren *Noelac* bakarrik —hau ere funtsean lan praktikoa— iritsi zen gehiagotan moldiztegira. Ezbairik gabe, Donibane Lohizuneko portuan zegoen ekonomia-jarduera handiak azaltzen du Voltoire-ren obran euskarari buruzko interesa agertzea.

Voltoire-ren gramatika-lana kategoria eta azpikategorietan banaturiko hitz-zerrendez osaturik dago, inolako analisirik gabe; haatik, aipagarria da euskarazko zenbait termino erabili zituela lehen aldiz, hala nola *datorquen de[n]boraq* «temps futur ou advenir» edo *achabatzecoua* «l'infinitif». Hizkuntza-eskuliburuko hiztegia —«Dictionarire alphabetique despuis lettre A iusques à V pour compter & pour les iours, semaynes, mois & ans»— literaturarekin zerikusirik ez duen lehenengo euskal hiztegi-lana da, eta 120 urtetan argitaratu zen bakarra. Lyongo lehenengo argitalpenean 1.050 sarrera ditu, frantses-euskara bi zutabetan antolatuak eta, lehen letra bakarrik kontuan harturik, alfabetikoki ordenatuak. Eranskin labur batean, ehun arteko zenbakiak, asteko egunak eta hilabeteen izenak datoz. Hiztegi alfabetikoak forma kanoniko finkoa erabiltzen du: izenkien absolutibo mugatu singularra eta aditz-izena. Era guztietako hitzak biltzen ditu, baina hain zahar eta luzea denez, lehen lekukotasun asko ditu. Gutxienez, geroko bi hiztegiren iturri izan da: Pouvreauren hiztegiarena eta Harrieten gramatikako hiztegiena. Bestalde, liburuaren amaieran hamalau solas hirueledun agertzen dira; haien iturria Gabriel Meurier-en *Coloquios familiares muy convenientes y más provechosos…* (Anberes, 1568) lana izan zen.

Gaur egun, Lyongo lehenengo argitalpenaren ale bakarra ezagutzen da. Geroago, 1642an bi aldiz inprimatu zen Baionan, bien artean azala soilik aldatuz, egilearen izenik gabe eta beste izenburu batekin: *Tresora hirour lenguaietaqua, francesa, espagnola, eta hasquara…* eta *Thresor des trois langues, françoise, espagnolle, et basque…* Hurrengo edizioak oso

moztuta atera ziren, guztietan hasierako gramatika laburra eta hiztegia gutxienez desagertu baitziren. Mozketa horiek, eta gehiketa bakanetan euskara ez agertzeak, nabarmen uzten dituzte orduan euskarazko lan teknikoak inprimatzeko zeuden zailtasunak.

Rafael Mikoleta presbitero bilbotarrak *Modo breve de aprender la lengua vizcaína* idatzi zuen 1653an. Voltoire-ren lanaren tradizio berekoa izanik ere, ez zen garaian argitaratu, segur aski ez zelako asmo horrekin sortu, euskara ikasi nahi zuen norbaiten enkarguz baizik. Nolanahi ere, artean Bizkaia eta Ingalaterraren arteko merkataritza harreman estuen lekuko dugu. Eskuizkribua egun British Museum-en gordetzen da. Mikoletaren lantxoa lau ataletan banatzen da: gramatika labur bat, hiztegi txiki bat, «Modo de la vizcaína poesía y sus versos» izenekoa eta gaztelania-euskara solas bakar bat. Hain zuzen, John Minsheu-ren *Pleasant and delightfull dialogues in Spanish* (Londres, 1599, 1623[2]) laneko lehenbizikoa da.

Mikoletaren hiztegia gaztelania-euskara zerrenda labur batez eta bi eranskinez osatuta dago: «Modo de contar» eta «Nombres de los días de la semana», hilabeteak ere aipatzen dituena. Gaztelania-euskara hiztegiak 893 sarrera ditu, hurrenkera alfabetiko ez oso hertsian. Oinarrizko hitzak biltzen ditu; hala ere, lehen lekukotasun asko daude. Oro har, itzulpen hiztegi hutsa bada ere, zenbaitetan Mikoletak eransketa batzuk egiten ditu, hala nola azalpen etimologikoak, gramatika oharrak, etab.

Pierre Urte donibandarrak euskal gramatika didaktiko luze bat idatzi zuen (*c.* 1714) bere sorterritik kanpo, protestantea izanik Ingalaterran erbesteratu baitzen. Urterena dugu, hain zuzen, neurri handiko lehen euskal gramatika ezaguna; gehienbat frantsesez idatzia dago, inoiz latinez eta oso bakanka ingelesez ere. Urtek erabili zituen eredu nagusiak Claude Mauger frantsesaren gramatika didaktikoa eta Ingalaterran latina ikasteko erabiltzen zen «Lilyren gramatika» deiturikoa izan ziren. Horrenbestez, *Grammaire cantabrique*-ren egiturak guztiz eredu greko-latindarreko gramatikei jarraitzen die. Lanaren hasieran ortografiari buruzko orri batzuk daude, Aita Gurearen testuarekin eta zenbait azalpen etimologikorekin amaitzen direnak. Ondoren, testuaren zati nagusia betetzen duen perpausaren atalen aurkezpena dator. Lehenengo atalak kategoriaka antolatutako frantses-euskara hiztegi moduan ekartzen ditu Urtek: zati nagusia gaikako izen-zerrenda luze bat da; ondoren, adjektiboak datoz eta gero «akzidenteak» deitzen dituenak —hau da, galdetzaileak, erakusleak, zenbakiak eta eratorri batzuk—. Deklinabidearen aurkezpenak hartzen ditu hurrengo orriak, latin gramatikaren ereduari hertsiki lotuak. Aditzaren azalpenak 350 bat orrialde betetzen ditu eskuizkribuan, gramatikaren atal luzeena alde handiz; bereziki atal honek islatzen du Urteren gramatikaren ezaugarri nagusietako bat: hainbat eta hainbat datu eskaintzen ditu, askotan ordena oso argirik gabe, baina analisi eta azalpen oso gutxi kausi daitezke. Adizki jokatugabeak ere bi zerrendatan antolatuta daude: zerrenda batean, *naiz* laguntzailea hartzen duten aditzak sartzen dira eta, bestean,

*dut* laguntzailea hartzen dutenak. Zerrenda hauen ondoren perpausaren gainerako atalak datoz: partizipioa, adberbioa, preposizioa, juntagailua eta interjekzioa. Gramatikari buruzko informazioa sintaxiak ixten du, arreta guztia komunztaduran eta joskeran jarriz. Hurrengo orrietan figurak aurkezten ditu, tradiziozko gramatikagintzan oso ohikoa zen atala, alegia; hemen eta sintaxian frantsesaren eta euskararen adibideetan hitz-ordena desberdinak markatzen ditu, hitzen gaineko letrak eta bestelako ikurrak erabiliz.

Gramatikako hitz zerrendetan guztira 1.500 sarreratik gora dira eta haien artean lehen agerraldi asko aurkitu daitezke. Akzidenteen eta aditzen zerrendetan hainbat hitz eratorri sortzen ditu Urtek era automatiko batean, atal bakoitzean atzizki berberak edo aditz jokatugabe mota berdinak erabiliz, hurrenez hurren. Adostasun nahiko handia dago Urte gramatikariaren merezimenduak ez direla handiegiak, datu biltzaile gisa ez bada; alabaina, horretan ere —haren hiztegigile lana ezagututa— susmo sendoa izan dezakegu ez ote zituen aditz paradigma asko ereduari jarraituz sortu edo osatu, bere herriko hizkerako «altxorretik» idoki beharrean.

Josef Domingo Lubieta donostiarrak *Diccionario en castellano y basquenze que sirve para la enseñanza de la bascongada* izeneko hizkuntza-eskuliburua idatzi zuen 1728an, egun Sociedad Bilbainako Liburutegian gordetzen dena (Bilbao 2011). Eskuizkribuak 459 orrialde ditu eta bi zutabetan idatzita dago, gaztelaniaz eta euskaraz. Lubietaren lana mandatu bat izan zen, Juan Francisco de Lullier Donostiako merkatariak euskara ikas zezan. Mota honetako lanetan ohikoa denez, hiru atal nagusi ditu, nahasian emanak: gramatika (aditz paradigmak eta deklinabidearen hasikinak), gaikako hitz-zerrendak eta esapideak, eta euskaraz egiteko ereduak (esaldi laburrak, solasak, irakurgaiak).

Martin Harriet notarioak euskaldunei frantsesa ikasten laguntzeko liburu bat argitaratu zuen, euskaraz idatzitako lehena: *Gramatica escuaraz eta francesez, composatua francez hitzcunça ikhasi nahi dutenen faboretan* (Baiona, 1741). Harrieten lanak hiru zati nagusi ditu: gramatika, hiztegiak (euskara-frantsesa eta frantses-euskara) eta, azkenik, «Remarques sur la langue Basque». Euskal gramatikari buruzko ohar eta analisi gehienak frantsesezko ohar horietan ematen ditu Harrietek. Eredu latindarrari atxikita ere, hamaika kasu bereizi zituen, baina ez zien izenik eman; dirudienez, kasuak bereizteko haien funtzioetan edota frantsesezko ordainetan oinarritu zen, ez guztiz euskarazko atzizkien formetan. Harrieten ustez, euskal aditza berez perifrastikoa eta zeharo erregularra da. Aditz-jokoen aurkezpenean euskararen komunztadura anizkunaren berri ematen du. Gainera, liburuan zehar Harriet aski arduratzen da euskal hitzen eratorpenaz.

Harrieten gramatikari-sena kritikatu bada ere, euskarazko gramatika-terminologia bat sortzeko ahalegintxo bat egin zuen: *ordocha* 'maskulinoa', *urricha* 'femeninoa'; *bakharra* 'singularra', *haiñitça* 'plurala'; *oraicoa* '(indicatif) présent', *osoqui eguin ez denecoa* 'prétérit imparfait', *osoqui eguiñecoa* 'prétérit parfait', *eguiñagocoa* 'plus-que-parfait', *ethorcecoa*

'futur', *manatcecoa* 'impératif', *nahizcoa* 'optatif', *juntatcecoa* 'conjonctif'; *construccionea edo erreniamendua*, etab. Alabaina, ez da guztiz erraza asmatzea termino hauetarik zein diren Harrietek sortuak edo egokituak eta zein diren garaian gutxi-asko erabiliak.

Euskararen gaineko oharren amaieran, Harrietek iragartzen du bere lanak jarraipena izango duela beste hiru liburukitan. Halaber, segidako «Escualdunei gomendioa eta Abisua» atalean eginak dituen beste bi liburu iragartzen ditu: bata «nausirik gabe» frantsesa irakurtzen ikasteko eta bestea, bi partetan, lehena aditz trinkoak («verbo gaitz eta erreguelan ez diren batçuen») euskaratik kentzeko eta bigarrena maileguak garbitzeko. Gainera, liburua ixten duen «Abisua autorac» atalean, laster argitaratzeko dituen bi libururen berri ematen du. Hauek guztiak, inoiz idatzi bazituen, galdu egin dira.

Harrieten ikasbidean bi hiztegi agertzen dira: euskara-frantsesa (1.590 sarrera) eta frantsesa-euskara (3.190). Ordu arteko euskal hiztegi argitaratu luzeen eta osoena da. Harrieten iturrien artean Axular, Voltoire eta, beharbada, Leizarraga eta Xurio aipa daitezke. Iduri luke bi hiztegiak frantses nomenklatura batean oinarriturik eratu zituela (Urgell 2009); bietan hitz berri ugari daude, horietarik lehen agerraldi eta hapax franko. Larramendik eta Lécluse-k erabili zuten berenak egiteko.

### 5.3. Gramatikak

xvi. mendeko lehenengo deskribapen partzial eta laburren ondoren (ik. aurreko kapitulua, §4.1), Silvain Pouvreauren gramatika-ohar banaka batzuk ditugu. Baliteke gramatika-lan luzeago baten zati edo zirriborroak izatea, baina ez dakigu, hala izatera, inoiz amaitu zuen; edonola ere, gramatika («avec quelques dialogues familiers») eta hiztegia argitaratzeko erregearen pribilegioa bazuen. Nabarmentzekoa da gramatika zati hauetan Pouvreauk bere hiztegia aipatzen duela, baita hiztegian *V. Gram.* laburdura erabili ere. Pouvreauren gramatika-ideiak ez dira oso originalak: ez du *-a* artikulutzat hartzen, nominatibo singulartzat baizik; latinaren komunztadura-ereduari jarraituz, uste du izenak kasua galtzen duela adjektiboarekin edo beste hitz batzuekin (*bat*, *batzuk*, erakusleak) azaltzen denean, eta salbuespen gisa guretzat berezko *-a* duten hitzak aipatzen ditu (*aita*, *ama*, *alaba*…); jatorrizko adjektiboak eta adjektibo eratorriak bereizten ditu, bigarrenak *-zko*, *ko(a)* eta *-ren(a)* atzizkiak dituenak izanik; bi nominatibo bereizten ditu, aditz substantibo edo pasiboekin erabiltzen dena (*-a*; hots, gure absolutiboa) eta aditz aktiboekin erabiltzen dena (*-ac*, gure ergatiboa); paradigma mugagabeko atzizki bereziez ohartu zen, baina ez zen konturatu mugagabearen izaeraz.

Gramatikagintzaren ikuspegitik askoz interesgarriagoak dira Arnaud Oihenartek bere *Notitia utriusque Vasconiae*n sartu zituen bi kapituluak —lehen liburuko xi. eta, batez ere, xiv.a—. Euskal gramatikagintza zaharrean Oihenartek leku berezia merezi du, bera

baita lehen euskal gramatikarietarik analisi zorrotz eta originalenak eskaini zizkiguna, ondoko euskalariengan eragin ñimiñoa izan bazuen ere. Euskal gramatikari eskainitako kapitulu labur eta mamitsuetan Europako Mendebaldean eredu nagusia zen gramatika greko-latindarraren mendekotasuna nabarmena da. Hala eta guztiz ere, aldian behin Oihenart gauza da eredu klasikoa gainditzeko eta euskararen deskribapen beregaina eta egokiagoa burutzeko.

Aipagarri da Oihenarten ideien artean gaur egun erabateko balioa duten hainbat ere aurki daitezkeela; ekarpen hauek, dena den, denbora luzea beharko zuten euskalaritzaren barruan arrakasta eta onarpena lortzeko, eta baten bat eztabaidagai zen oraindik XIX. mendearen hondarrean. Hona ekarpen horietariko batzuk: XI. kapituluan *-a* eta *-ak* singularreko eta pluraleko artikuluak direla erakutsi zuen, orduko iritzi nagusiaren kontra (izenkien bukaerak edo nominatiboaren atzizkiak zirela, alegia); XIV.aren hasieran, euskal deklinabide mugagabeaz ohartu zen (*inarticulata* deitu zuena); halaber, euskararen kasuen artean latinaren paradigmetatik kanpo geratzen diren kasu aktiboa (*casus agendi* edo *activus*, gure ergatiboa) eta negatiboa (*casus negandi seu dubitandi*, gure partitiboa) identifikatu zituen eta, aldiz, euskarak akusatibo eta bokatiborik ez duela adierazi zuen, deklinabidearen ikuspegi morfologiko formal bati jarraituz; aditzaren azterketari dagokionez, euskararen berezko aditz-jokoa trinkoa dela (*coniugatio propria*), eta ez perifrastikoa (*coniugatio impropria*), proposatu zuen; azkenik, laguntzaileen sistema aski ongi eman zuen, lau laguntzaile aipatu baitzituen (*nais*, *dud*, *adi* eta *esac*) eta modu eta denboren arteko euren banaketa egoki bereizi.

Wilhelm von Humboldten paperen artean, Nicolas Fréret historialari eta hizkuntzalari frantsesaren euskal gramatika laburra dago, *Essay d'une Grammaire de la Langue Basque* (*c.* 1711-1714). Fréreten eskuizkribua 1992an agertu zen Krakovian eta egun hango Biblioteka Jagiellońskan dago. Fréreten testua, funtsean, Oihenarten XIV. kapituluaren laburpena besterik ez da, diferentzia txikiak eta Fréreten hutsak gorabehera. Irudi luke askotan Fréretek ez zituela Oihenarten analisiak ondo ulertu, euskaraz ez zekielako segurki; esate baterako, hiru nominatiboz mintzatzen da, Oihenartek kasu berezitzat hartu zituen nominatiboa, aktiboa eta negatiboa bateratuz.

Joanes Etxeberri Sarakoak *Escuarazco hatsapenac latin ikhasteco* (1712) lana idatzi zuen, euskaraz eta latinez, bere hiztegi laueledunaren «cimenduac, çainac eta erroac» izan zitezen. *Escuarazco hatsapenac* Sarakoaren proiektu hirukoitzaren oinarri bat izan zen. Etxeberrik bere gramatika idazteko Hannibal Codret (1525-1599) jesuita eta gramatika-irakasle savoiarraren lan bat izan zuen eredu: *De primis Latinae grammaticae rudimentis libellus* edo, frantsesezko izenburua duten edizioetan, *Les Rudimens ou les premiers principes de la langue latine*. Etxeberriren gramatika, izenburuan ageri denez, euskaldunei latina ikasten laguntzeko egina da eta, hortaz, gehienetan latinaren gramatika eta formak ditu

abiapuntu. *Escuarazco hatsapenac*ek hiru atal ditu: lehenbizikoan latinezko deklinabide paradigmak ematen ditu; bigarrenean, aditz-jokoen paradigmak eta, hirugarrenean, gramatikaren zatiei, perpaus-atalei eta komunztadurari buruzko galde-erantzunen bidez azaldutako xehetasunak. Etxeberrik latinaren ohiko zortzi perpaus-atalak bereizi zituen; hauexek dira eman zizkien euskarazko deiturak: *icena*, *icenaren ordaina*, *verboa*, *participioa*, *adverbioa*, *preposicinoa*, *juntaguina* edo *juntagaillua* eta *interjecinoa*.

### 5.4. Hiztegiak

Aymeric Picaud-en zerrenda aitzindariaren eta XV-XVI. mendeetakoen ondoren (ik. aurreko kapitulua, § 4.2, 4.4), euskara barne duen hurrengo hitz-zerrenda Hieronymus Megiserus alemaniarrak bildutako *Thesaurus polyglottus* (Frankfurt, 1603) lanean dugu, latinetik abiaturik eta beste berrogei bat hizkuntzarekin batera. Megiserusen laneko euskal ehun bat ordainen iturriak Siculo eta batik bat Vulcanius dira, ez bada euskarazkotzat (*cantabrice*) hartzen dituela gaskoierazko (*vasconice*) hitzak. Europan zehar egindako bidaia batean, Francis Willughby naturalista britainiarrak 391 sarrerako zerrenda bat ondu zuen 1664an, zutabe banatan bost hizkuntza agerraraziz: latina-provenzera-gaztelania-arabiera-euskara. Willughbyren zerrenda gaika antolaturik dago eta eskema teozentrikotik abiatzen da. Willughbyren hitz-zerrenda, beste hiztegitxo eta bestelako eskuizkribuekin batera, Nottingham-eko Unibertsitateko Liburutegian gordetzen da. Halako hitz-zerrendak biltzen jarraituko da 1700ez geroztik ere, nahiz eta denak bigarren edo hirugarren eskukoak izan, hala nola Edward Lhwyd-en eleaniztunak (1703, 1707) eta Guillaume Manier-en frantsesa-euskara zerrenda (1726); haatik, ezbairik gabe, zerrenda horiek badute interesik, euskarak eta haren berezitasunak Europako adituen artean izan zuten oihartzunaren berri ematen baitigute.

Euskara eta islandiera elkartzen dituzten lau zerrenda anonimoren berri dugu; bi luzeenek *Vocabula Gallica* eta *Vocabula Biscaica* izenburuak dituzte eta egun Reykjavik-eko Árni Magnússon Institute for Islandic Studies izenekoan gordetzen dira; hirugarrena galdurik dago, haren zati bat XIX. mendeko kopia bati esker ezagutzen badugu ere, eta laugarrena Harvardeko Unibertsitatean identifikatu zen 2010ean. Zerrenda hauek guztiek batez ere XVI eta XVII. mendeetan islandiarren eta euskal arrantzaleen artean izan ziren harreman estuak lekukotzen dituzte; haren isla nagusiak dira elkarrekin komunikatzeko sortu zuten pidginaren arrastoak.

Berez «euskal hiztegigintza» dei dezakeguna XVI. mendearen bigarren erdian sortu zen, literaturarekin bateratsu eta Europako tradizio lexikografiko nagusiak baino beranduxeago. Tamaina bateko hiztegiak ez ziren argitaratu Larramendirena arte (1745), irakurlego egokirik eta finantziaziorik ezean; baina lan xumeago batzuk —beste lan

baten barruan sartuak edo hizkuntza ikaskuntzarekin lotuak— inprimategira iritsi ziren. Honek euskararen egoera diglosikoa erakusten digu, baita zein genero lexikografikok izan zuten harrera hobea, edo suerte hobea. Hiru genero izan ziren: literatura lanetan sartutako hitz zerrendak, hizkuntza eskuliburuak (ik. § 5.2) eta etimologia-zerrendak.

Oihenarten lanetan izaera desberdineko bi hitz-zerrenda ditugu: batetik, *Notitia*ko zerrenda etimologikoa eta, bestetik, poesia-liburuaren eranskin gisa ematen duen *Neurtitz hautaco hiz bekanen adigarria* glosarioa. *Notitia*ko lehen liburuko XIII. kapituluan Oihenartek Iberiar Penintsulako antzinako hizkuntzaz dihardu; bertan biltzen ditu haren ustez euskal jatorria duten gaztelaniazko hitzak, A, B eta C letretatik hasten direnetara mugatuz, 135 sarrera guztira. Gutxienez Pouvreauk eta Larramendik (1728) erabili zuten zerrenda hau. Poesia-liburuko glosarioa 117 euskal hitzez osatuta dago, alfabetoaren hurrenkeran antolatuak. Poesietako hitz ulergaitzak azaltzeko asmoz egin zuen eta, beraz, Europako *hard-word* hiztegien tradizioan txertatzen da. Bestalde, Oihenartek laburduren bidez adierazten du hitz bakoitza zein eremutan erabiltzen den.

Ibarguen-Cachopín deituriko kronika historikoaren liburuki batean, XVII. mende hasieran erantsiriko bi hiztegiño agertzen dira: gaztelania-euskara (110 sarrera) eta euskara-gaztelania (155 sarrera). Lehenengoan izenak biltzen dira gaika; bigarrena, neurri handi batean, lehenaren berrantolatze alfabetikoa da, baina letra bakoitzaren amaieran hitz gehiago erantsi dira, haien artean adjektibo eta izenlagun batzuk. Bada, gainera, «Etimologías vascas de varios nombres de la Península» izeneko hirugarren zerrenda bat (41 sarrera), Etxaberen lanarekin lotua.

Euskara Zaharraren garaian bi hizkuntza-liburu baino ez ziren inprimatu: Voltoireren eskuliburua eta Harrieten gramatika. Orduko gainerako ekoizpena eskuz idatzita gordetzen dugu, edo galdu da. Bistan da argitaratuak lan xehe, labur eta merkeak zirela, saltzeko errazagoak alegia. Aitzitik, tamaina bateko hiztegi handi eta garestiek nekez lor zezaketen eroslegai nahikorik, eta horregatik ez zuten inprimatzeko dirurik lortu, ezta erakundeetatik ere (Bidegarai eta Etxeberri Sarakoa, kasu). Ezbairik gabe, galera handia da 1600-1745 bitartean ondu ziren zazpi hiztegietarik guregana bi besterik ez iritsi izana, horrek, ezinbestean, garaiko hiztegigintzaren ikuspegi partziala ematen baitigu. Galdutako bostei buruz ditugun datu bakanek interes berezia dute ikuspegi partzial hori ahal den neurrian osatzeko (ik. § 5.5). Gordetako bi hiztegi handiak Pouvreaurena eta Urterena dira.

Silvain Pouvreau lehen hiztegigile euskaldun berria izan zen. Gramatika eta hiztegia lotu nahi izan zituen, baina, ikusi dugunez (ik. § 5.3), lehen lanetik zati batzuk baino ez dira gorde. Pouvreauren hiztegia Humboldtek ezagutarazi zuen XIX. mende hasieran, eta orduz geroztik hiztegigile nagusi guztiek iturri gisa erabili dute. Hala ere, oraingoz argitaragabe dago. Frantziako Bibliothèque nationale-n gordetzen da, hiru

eskuizkributan: A eskuizkribuan hiztegi osoaren zirriborroa dago, eta Pouvreauren etengabeko gehiketak eta zuzenketak ditu; B eskuizkribua aurrekoaren zati baten kopia garbia da; azkenik, C eskuizkribu laburrak *arrayoa-aztorea* bitarteko sarrerak biltzen ditu eta, ziurrenik, egilearen benetako asmoa islatzen du, alegia euskara-frantsesa-gaztelania-latina hiztegi laukoitza burutzea.

Lehenik alfabetoaren arabera antolatuta badago ere, bigarren maila batean Pouvreaurena hiztegi etimologiko bat da, hitzak familiaka biltzen baititu. Hortaz, hitz nagusiaren azpian haren elkartu-eratorriak, lokuzioak eta kolokazioak, literatur adibideak, etab. datoz. Pouvreauk zenbait euskal testutatik ateratako aipuak sartu zituen, iturriak laburduren bidez identifikatuz. Gaztelaniazko hitz guztiak C. Oudin-en *Thrésor des deux langues française et espagnole* (1607, etab.) lanetik hartu zituen.

Ospe handia lortu du, bereziki euskaratik abiatzeagatik eta literatur iturriak baliatzeagatik. Hau dela eta, zenbaiten iritziz Pouvreaurena «autoritateen hiztegia» da, jarraitu beharreko eredua; beste batzuek, aldiz, «gaitasunaren hiztegitzat» hartu izan dute, haren antolamendua aintzat harturik. Hala eta guztiz ere, berriki frogatu da Pouvreauren hiztegiko hitz gehienak haren irakurketetatik datozela; gainera, beste iturri batzuk aurkitu zaizkio, horien artean oinarrizko hitzen emaile nagusia bide den Voltoire-ren hiztegia.

Pierre Urteren *Dictionarium Latino cantabricum* latin-euskara hiztegiak hamar mila inguru euskal hitz biltzen ditu *a-commotus* bitarteko sarreretan. 1715 inguruan idatzi zuen eta hurrenkera alfabetiko ia osoan antolatu zuen. Horretarako, Urtek *Linguae Romanae Dictionarium luculentum novum* (1693) latin-ingelesa hiztegia baliatu zuen. Inoiz bere herriko hizkera islatzen zuela pentsatu bada ere, gaitasun hiztegitzat har dezakegu Urterena, era automatiko batean oinarri guztiei atzizki guztiak ezartzen saiatzen delako, ahalik eta hitz eratorri gehien lortzeko asmoz; bestalde, automatismorako joera gero eta nabarmenagoa da hiztegian aurrera joan ahala, sarreretan bataz beste gero eta euskal ordain gehiago ematen baititu (A letran 3,2 ordain; C letran 10,5). Atzizkien eta elkarbidearen erabilera aberatsa dela eta, Larramendiren aitzindari (ezezagun) gisa agertzen zaigu, inoiz hitz berri ausartegiak ere sortu zituelarik.

### 5.5. Gramatika eta hiztegi galduak

Guregana iritsi diren gramatika eta hiztegiez gain, beste zenbait lan galduren berri dugu. Lehenik, Ziburuko Etxeberrik hiztegi elebidun bat idatzi zuen, ziurrenik euskara-latina. Haren arrasto batzuk geratu dira Pouvreaurenean eta Oihenart eta Pouvreauren arteko gutunetan. XVII. mendearen erdialdean, Jakes Bela politikari eta legegizon zuberotarrak euskal gramatika bat eta hiztegi bat idatzi zituen, egun galdurik daudenak; hortaz,

gramatika eta hiztegia lotu zituen lehen euskal autorea izan bide zen. Esan izan da lan hauek *Tablettes* entziklopedia moduko lan mardul argitaragabean zeudela, antza denez falta den liburukian, hain zuzen. Halarik ere, Clément-Simonek (1894-1895: 219-220) emandako datuen arabera, badirudi *Dictionnaire basque* eta *Compendium de grammaire basque* lanak *Tablettes*-etatik berezirik zeudela. Jakes Belak errefrau bilduma txiki bat ere utzi zigun.

Dominique Bidegarai frantziskotarraren gramatika (*Rudimens basques*) eta hiztegia ere galdu dira, baina lan horien arrastoak jarraitu ahal dira Nafarroako Estatuen Deliberamenduen Erregistroan. Bidegaraik, 1675-1679. urteen artean, zenbait diru-eskari aurkeztu zituen bere lanak argitaratzeko. 1675eko agiriek dioskute Bidegaraik hogei urtez euskara-frantses-latin hiztegi hirukoitz bat ondu zuela; aurkeztu zuen helburua euskal gazteei Euskal Herritik irten gabe latina eta frantsesa ikasteko baliabideak eskaintzea bazen ere, hiztegiari zegokion beste xede aitortu bat euskara eguneratzea izan zen. Bidegaraik diosku Nafarroa Behereko, Zuberoako eta Lapurdiko hitz *guztiak* biltzen dituela, eta zaila dela hiztegi handiago, modernoago eta fidagarriagorik aurkitzea; honek iradokitzen du ziurrenik garaiko eredu bat erabili zuela. Estatuek uko egin zioten lehen eskari honi. Hurrengo urtean bigarren eskari bat egin zuen eta ordurako hiztegiari gaztelania erantsi zion. Halaber, Estatuen deliberamenduetan azaltzen da euskara ez dela arautu, ezta zientzietan erabili, eta azpimarratzen da euskara dela hebreeraren antza duen hizkuntza bakarra eta, hebreerarekin batera, zientzia eta elokuentziarako egokiena. Bidegarairen lanak nazioarteko harremanetarako eta merkataritza erlazioetarako ekar lezakeen abantaila ere nabarmentzen da. Hartara, Estatuek batzorde bat izendatu zuten eskaria azter zezan.

1677ko batzarrean Bidegaraik eskaria berretsi zuen eta batzordeak hiztegia eta *Rudimens* direlakoak onuragarri eta erabilgarriak izango zirela baieztatu zuen. Gramatikan euskararen deklinabidea eta aditz-jokoa azaltzen eta arautzen zirela aipatzen da; euskal aditzaren aberastasuna ere aipatzen da, hurrengo urteetan areagotuko den joera bati ateak irekiz. Era berean, hebreerarekiko erkatzeari eusten zaio, bi hizkuntzetan aditzek generoa baitute, latinean ez bezala. Euskara «langue mère» dela ere agertzen da, Babelgo hizkuntza alegia. Ondorioz, Estatuek 600 liberako diru-laguntza ematea onartu zuten, baina Bidegaraik ez zuen sosik jaso, ezta 1679an hil ondoren haren oinordekoek ere. Hiztegia eta gramatika argitaragabe geratu ziren eta baliteke Iraultzaren garaian Paueko Frantziskotarren Artxiboekin batera sakabanatu eta galdu izatea.

Joanes Etxeberri Sarakoaren hiztegi laukoitza (euskara-latina-frantsesa-gaztelania) haren proiektuaren hirugarren oinarria izan zen. Gramatika (1712) baino lehen hasi zen idazten, eta Larramendiren arabera, 1733 aldean eskuartean izan zuenean amaituta zegoen. Etxeberriren hiztegia euskaldunentzat egina zegoen, egileak berak *Gomendiozko*

*kartan* dioskunez: «bereciqui ene hertar lau-urtarrec […] bere herritic camporat ilkhi gabe cembait hitzcuntçaren parte bederen ikhasteco». Garai batean Sbarbi-Urkixo Eskuizkribua deitzen den hiztegi laukoitzarekin lotu bazen ere (Etxeberriren hiztegia bera zelakoan, edo Larramendiren hiztegiko hitzekin Etxeberrik egindako birmoldaketa behinik behin), gaur egun seguru dakigu Sbarbi-Urkixo hiztegia XIX. mendekoa dela.

Melchor Oianguren misiolari frantziskotarrak euskarari buruzko zenbait lan utzi bide zizkigun, egun galdurik daudenak, inoiz idatzi baziren: lehena tagalo-gaztelania-euskara hiztegi hirueledun bat; bigarrena *Arte de la lengua Vascongada*, Oiangurenek berak dioenez, 1715ean idatzi zuena; eta hirugarrena *Cantabrismo Elucidado* izenekoa. Oiangurenen bi gramatika ezagunak, japonierarena (Mexiko, 1738) eta tagaloarena (Mexiko, 1742), misiolarien hizkuntzalaritzaren joeraren barruan sartzen dira eta, halako lan asko bezala, 1481etik aurrera argitaratu ziren Nebrixaren latin gramatiketan oinarritzen dira. Nolanahi ere den, hizkuntzak ikasteko eta erkatzeko zaletasuna baitzuen, japonieraren eta, bereziki, tagaloaren gramatika-liburuetan euskarari buruzko zenbait ohar tartekatu zituen, beste hizkuntza batzuei buruzkoekin batera. Irudi luke euskarari buruzko lan galduetan ere Nebrixaren ereduaz baliatu zela, baina galdurik diren bitartean ezin izango dugu egiaztatu.

Azkenik, Pierre Duhalde jesuitaren hiztegi galduaren berri bi iturritatik iritsi zaigu: W. von Humboldt eta P. Delattre, bietako inork eskuartean izan ez bazuen ere. Bi autoreek esaten dute eskuizkribua hiru liburukiz osatuta zegoela eta XVIII. mendekoa zela. Halaber, Humboldtek gaineratzen du oso idazkera irakurgaitzekoa zela. Hala ere, Larramendiren aurreko hiztegia den jakiterakoan, bi iturriak ez datoz bat: Humboldtek dio Duhalde 1743an hil zela; Delattrek, aldiz, adierazten du 1762an Bordelen gaixorik zegoela. Gure ustez, Delattre dago zuzen eta, ziurrenik, Humboldt Pierre Duhalde liburuzaina eta 1743an hil zen Jean Baptiste Duhalde (edo du Halde) jesuita eta geografo frantses ospetsua nahasi zituen, «El famoso Jesuita Du Halde… † en 1743… dejó, pero en un manuscrito casi ilegible, un Diccionario Vasco en 3 volúmenes en folio…» idatzi baitzuen. Gauzak horrela izatera, beraz, oso litekeena da Duhalderen hiztegi galdua Larramendiren ondokoa izatea eta neurri handi batean *Hiztegi Hirukoitz*ean oinarrituta egotea.

**Irakurgai osagarriak**

Arkotxa & Oyharçabal 2009, Camino 2008, 2011, Cid Abasolo 2002, Gómez 2008a, Gómez & Urgell 2010, Intxausti 1990, Lakarra 1992, Lakarra 1996b, Madariaga 2008, Mounole 2011a, Mujika 2002, Oyharçabal 2001a, 2001b, Pikabea 1993.

7.

# LEHEN EUSKARA MODERNOA[1]

Blanca Urgell

## SARRERA HISTORIKOA: 1745-1877

(Xabier Zabaltza)

XVIII. mendearen bigarren erdian mentalitate burgesa nagusituko da, batzuetan iraultza baten bidez. Halaxe gertatu zen Estatu Batuetan (1776) eta Frantzian (1789). Duela urte batzuk, eztabaida historiografiko bitxi bat gertatu zen, ea Espainian antzeko iraultzarik izan ote zen. Denetariko iritziak izan ziren. Batzuen arabera, Squillace mutina (1766, matxinadaren garaikidea) izan zen lehen saio iraultzailea. Beste batzuen arabera, iraultza Bigarren Errepublika (1931) arte atzeratu behar zen. Azkenik, beste batzuek XIX.

---

1 Lan hau «Monumenta Linguae Vasconum (IV): textos arcaicos vascos y euskera antiguo» (MINECO, FFI2012-37696), «Historia de la lengua vasca y lingüística histórico-comparada» (Eusko Jaurlaritza, GIC. IT698-13) eta «Hizkuntzalaritza teorikoa eta diakronikoa: Gramatika Unibertsala, hizkuntza indoeuroparrak eta euskara» (UPV/EHU, UFI11/14) direlakoen laguntzarekin egina da. Inoren aipuak erdaratik euskarara itzuli ditut guztiak («itzul.» laburduraz markatuak), eta testu zaharretakoak oro har gaurko grafian eman ditut, salbu eta grafiak berak zerbait adierazten duenean. Behar izanez gero, *OEH*-ko laburdurak erabili dira egileak edota testuak aipatzerakoan, irakurleak bertan erraz topa ditzan euren erreferentziak. Baliatu ditudan iturri guztiak, ezinezkoa zen bakoitzari zor zaiona lekuan-lekuan adieraztea, irakurketa biziki oztopatu ezean; honegatik, ezinbestekoa deritzadanean bakarrik aipatu ditut. Ezinezkoa zen, halaber, testu zaharren edizio moderno guztien berri ematea, baina ahalegina egin dut bana behintzat aipatzen. Iñaki Camino, Ricardo Gómez, Iván Igartua, Joseba A. Lakarra, Manu Padilla, Koldo Ulibarri eta Consuelo Villacortak lana hobetzen lagundu didate beren iruzkin eta ekarpenekin. Zor handitan nago José María Imizcoz eta Javier Esteban historialariekin ere. Bihoakie hemendik guztiei nire esker ona.

mendeko hamaika *pronunciamiento*-etako baten bat aukeratu zuten. Espainian iraultza burgesik izan edo ez, bistan da kontrairaultza oso bortitza izan zela, karlismoan haragitu zena, non euskaldunen parte-hartzea funtsezkoa izan baitzen.

## 1. EKONOMIA ETA DEMOGRAFIA

Hizpide dugun garaiaren hasieran, Euskal Herriak 600.000 bizilagun baino gutxiago zituen. Hala ere, 1877rako, 900.000 baino gehiago zituen. Alegia, Erregimen Zaharreko demografia, jaiotze eta hiltze tasa handiak zituena, modernizatuz doa, medikuntzaren eta higienearen hobekuntzak bizi-itxaropena luzatzen baitu. Populazioa tentuz handitzen da, belaunaldiz belaunaldi, nekez izan bazitezkeen ere gerra gehiago: Iraultza garaiko gerrak (1792-1802), Frantsestea eta Napoleonen beste gerrak (1803-1815), Gerra Erregezalea (1821-1823), karlistadak (1833-1839 eta 1872-1876) eta Gerra Franko-Prusiarra (1870-1871), kolonietako gerrak, Frantziako agintari iraultzaileek eraginiko sarraski eta deportazioak eta Espainiako *pronunciamiento* etengabeak ez aipatzeagatik, ez eta Ameriketarako emigrazioa ere, Euskal Herria odolusten segitu zuena.

1876ko «foru ezeztatzeak» bidea eman zion burdingintzaren iraultzari. Antzinako olak labe garai bihurtuko dira. Hori nekez gertatuko zen Bizkaiko Foruko XVII. Legea indarrean egon izan balitz, burdin zainaren esportazioa debekatzen baitzuen. Bizkaiko Jaurerria, sektore tradizionaletan oinarrituriko ekonomia bat zeukana, hil zen, eta haren errautsetatik Bizkaiko Probintzia sortuko da, benetako potentzia industrial bat, Espainiako eskualde guztietako milaka etorkin erakarriko dituena.

## 2. KULTURA ETA IDEOLOGIA

XVIII. mendea despotismo ilustratuaren mendea da. Ilustrazioa ideologia burgesa omen da. Horrek ez du esan nahi, baina, ideologoak nahitaez burgesak zirenik (berez, Espainian, Hego Euskal Herria barne, nobleak izaten ziren). Ilustratuak, maiz Koroak sostengaturik, Erregimen Zaharreko oztopoak gainditzen saiatu ziren, Monarkiaren garapen ekonomiko eta kulturala eragozten zutenak. Horren ondorioz, estatuaren administrazioa arrazionalizatzeko saioak izan ziren. Diruak, neurriak eta legeak bateratu nahi izan zituzten. Hizkuntza ere bai? Baita.

Azaleko zertzelada batzuk ematearren, Espainian, XVIII. mendearen bigarren erdialdean, Olabidek, Forondak eta Cabarrús-ek proiektu bana prestatu zituzten gaztelania bizilagun guztien artean zabaltzeko, baina alferrik. Karlos III.ak 1768ko ekainaren 23an eman Errege Zedula Koroaren esku-hartze linguistikoaren lehen adibideetako bat da,

baina, esan ohi denaren kontra, haren helburu nagusia latina baztertzea zen, ez katalana. Hala ere, egia da garai honetan nabarmena dela agintari batzuen erdeinua gaztelania ez beste hizkuntza espainolekiko. Euskararen kasura mugatzeko, 1766an, Arandako kondeak Kardaberazek Ignazio Loiolakoari buruz euskaraz idatzi zuen lan bat debekatu zuen. Eta euskarazko literaturako mugarririk garrantzitsuenetako bat, *Peru Abarka*, 1802an idatzia, ezin izan zen 1881 arte argitaratu. Koroaren eragileen ekintza horiek ulertezinak dira berezko hizkuntza zuten herrietako eliteen onarpen gaberik (hots, Euskal Herriko eta Herrialde Katalanetako eliteen onarpen gaberik, garai hartan galegoa ez ohi baitzen hizkuntzatzat jo), elite horiek gustura hartu baitzuten parte gaztelania zabaltzeko saioetan.

Komeni da ez ahanztea Erregimen Zaharrean gaztelaniazko alfabetatzea klase aberatsentzat gorderiko pribilegio bat izan ohi zela. Besteek, gehienez ere, katixima ikasten zuten, tokian tokiko hizkuntzan irakats zitekeena. Moyano Legeak (1857tik 1970era bitarte indarrean egon zenak) Espainia osoan lehen hezkuntza eta gaztelaniaren gramatikaren irakaskuntza ezinbestekotzat jo zituen. Baina, ordurako, Nafarroako Erresumako erakundeek hamarkada batzuk eginak zituzten eskoletan gaztelaniaren nahitaezko irakaskuntza bultzatzen. Aitzitik, Gipuzkoako Batzar Nagusiek eta areago Bizkaikoek, mende iraganetako xedapenak ahantziz, euskararekiko interes aparta adierazi dute ezeztatu aurreko azken hamarkadetan, beren bilkuretan ahoz eta idatziz erabiltzeko baimena eman baitzuten.

Ipar Euskal Herriari dagokionez, Frantziako Iraultzak gauzaturiko homogeneizazioa *longue durée*-ko prozesu bateko abagune bat besterik ez da. XVI. mendean hasirik, Lehen Mundu Gerrarekin azkartu zen eta ez zuen bukatu azken hamarkadetako industrializazioa (edo, hobe, tertziarizazioa) arte. Ipar Euskal Herrian, II. urteko berolisaren 2ko (1794ko uztailaren 20ko) Dekretuak, frantsesa ez beste hizkuntza guztiak debekatu zituenak, baino askoz eragin handiagoa izan zuten Ferryk eta Goblet-ek 6 urtetik 13 urtera bitarteko haurrentzat eskola nahitaezko, doako eta laikoa sortzeko bultzaturiko legeek (1881-1886).

Itzul gaitezen, baina, Hego Euskal Herrira. XVIII. mendearen bukaeraren eta XIX. mendearen hasieraren bitarteko urteetan, Lege Zaharraren aldekoek eta kontrakoek (hauetako batzuk ere Euskal Herrikoak zirela) borroka ideologiko batean dihardute. Basileako Bakearen ondoren (1795), Konbentzio Gerrako desegigoagatik kopla-buruko bat bilatu behar izan zen eta aurkitu: Lege Zaharra, hain zuzen ere. Giro horretan argitaratu ziren Historiaren Errege Akademiaren *Diccionario geográfico-histórico de España* hiztegiaren bi liburukiak (1802). Madrilgo Gorteak foruen kontra ekiniko oldarraldian are eragin handiagoa izan zuen Juan Antonio Llorente kalonjearen *Noticias históricas de las tres Provincias Vascongadas* (1806-1808) liburuak. Egile horiek, Euskal Herriko foruak Gaztelako errege-erreginek emaniko pribilegioak besterik ez zirela (eta,

beraz, horiek indargabetu ere egin zitzaketela) frogatzen saiatzearekin batera, Euskal Herriaren beste bereizgarritasunaren kontra ere jo zuten, euskararen kontra, hain zuzen ere. Astarloaren obra maila linguistikoan eta Novia de Salcedorena juridikoan, besteak beste, *Diccionario* eta *Noticias* direlakoen kontrako erreakzioak dira. Astarloak eta Novia de Salcedok, biek ala biek, eragin izugarria izanen dute Sabino Aranarengan.

## 3. ERAKUNDEAK

XVIII. mendearen erdialdetik aurrera, maiz probintzietako mugak gainditzen zituen euskal berezitasunaren kontzientzia indartu zen. 1765ean, Euskal Herriaren Adiskideen Elkartea sortu zen, *Irurac Bat* goiburua bereganatu zuena (hots, «Araba, Bizkaia eta Gipuzkoa bat dira»). Bere garairako oso aurreraturik, Manuel Larramendik, *Conferencias sobre los Fueros de la Provincia de Guipúzcoa* liburuan (1756tik 1758ra bitarte idatzi eta 1983 arte argitaratu gabe gelditu zen horretan) Pirinioko Probintzia Batuetako Errepublika egin zuen amets eta bere buruari galde egin zion modu erretorikoan (gaztelaniaz, noski): «Zergatik egon behar ote dute Gaztelaren menpe Espainiako hiru probintziak, Gipuzkoak, Arabak eta Bizkaiak (eta ez naiz Nafarroako erresumaz ari); eta beste hiruk Frantziaren menpe, Lapurdik, Zuberoak eta Baxenabarrek?». 1775etik aurrera (1800etik aurrera, erregearen onarpena zutela), Arabako, Bizkaiko eta Gipuzkoako Batzar Nagusietako eta Diputazioetako ordezkarien Konferentzia Politikoek Mendebaleko Euskal Herriko Batzar Nagusiak bailiren jardun zuten zenbait momentutan. Nafarroak noizean behin hartu zuen parte Konferentzietan, 1897tik 1936an desagertu arte. Arabak, Gipuzkoak eta Bizkaiak gobernu bakar bat osatu zuteneko lehen aldia Frantsestean izan zen (1810-1813). 1936-1937an berriro gertatuko zen bezala, Nafarroa probintziez gaindiko erakunde horretatik kanpo gelditu zen.

*Laurac Bat* kontzeptua (Nafarroa ere biltzen zuena) 1846tik aurrera zabaldu zuen Nafarroako eta Euskal Probintzietako Behin-Behineko Junta Karlistak. Hala ere, 1841ean, Lehen Karlistada (1833-1839) bukaturik, Nafarroak bere «foruen lege» berezia negoziatua zuen Madrilgo Gobernuarekin (*a posteriori* «Lege Hitzartua» deitua). Horrela, haren zortea beste euskal herrialdeenetik bereizi zen. Hauen erakundeak 1876an «ezeztatu» ziren (komatxoak jarri ditut, uztailaren 21eko legeak autogobernurako zirrikitu bat uzten zuelako zergen arloan, 1878tik aurrera indarrean izanen ziren Itun Ekonomikoak ezartzeko balioko zuena, Nafarroako Hitzarmenari susmatu baino gehiago zor diotenak).

Aitzitik, Ipar Euskal Herrian ez zen gertatu inolako kalapitarik foruen gainean. Lehen esan bezala, hiru herrialde haietan ez dago «bereizgarri» instituzionalik. 1789ko Iraultzak Lapurdiko, Baxenabarreko eta Zuberoako erakunde guztiak behin betiko

ezeztatu zituen eta Ipar Euskal Herriko hiru herrialdeak Bearno gaskoidunarekin batu, Pirinio Behereetako Departamendua (1790) osatzeko, non euskal herritarrak gutxienak baitira. Bidezko da gogoraztea, baina, Frantziako Biltzar Konstituziogileari esker, Baiona berriro batu zitzaiola Lapurdiri, sei mendez bereizirik egon eta gero (Agramondarren Jaurerria Baxenabarreri batu zitzaion bezala).

## 4. EUSKARAREN EGOERA

Frantsesteak eta karlistadek txirotu egin zuten Hego Euskal Herria. Modu ikusgarrian, gainera. XVI. eta XVII. mendeetan euskaldunen «etnotipoa» kaparea izan bazen eta XVIII. mendean, merkataria (indianoa, bereziki), XIX. mendetik ia-ia gaur arte euskaldunen irudia gerrillariari eta zizpaz armaturiko apaizari loturik gelditu zen. Nekez gutxiesten ahal da karlismoak hegotar euskaldunen nortasun berezian izan zuen eragina, hiririk garrantzitsuenak beti liberalen menpe egon baziren ere.

Topikoak gorabehera («euskaldun, fededun»), Eliza Katolikoaren euskararekiko jarrera aztertzen duten ikerketa enpirikoak falta dira. Izan ere, jarrera hori oso aldakorra eta tokian tokikoa izan zen. Eskualde batzuetan, behintzat, kleroak, neurri handi batean karlismoaren aldekoak, euskara ideologia modernoen kontrako harresitzat jo zuen. Testuinguru honetan kokatu behar dira Sandovaleko markesaren ahoberokeriak Bigarren Gerra Karlistaren ondoren, ilustratuek ez bezala, Hego Euskal Herrian gaztelaniaren hedapena ez ezik argi eta garbi euskararen desagerraraztea ere aldarrikatzen zutenak. Ipar Euskal Herrian, batzuetan tirabirak sortu bazituzten ere, *xuri* eta *gorri*-en arteko lehiak (kontserbadore katolikoak eta errepublikano laikoak, hurrenez hurren), euskara ukitu zutenak, ez ziren inoiz izan Hego Euskal Herriko karlista eta liberalen artekoak bezain bortitzak. Sasi guztien gainetik eta hodei guztien azpitik, herriko etxeek segitu zuten euskara erabiltzen eta mediku eta idazkari euskaldunak kontratatzen eta ez abertzaletasunagatik, ez horixe, baizik eta auzo anitzek ez zutelako beste hizkuntzarik konprenitzen.

Arabako, Bizkaiko eta Gipuzkoako foruen «ezeztatzeak» (1876) lagundu zuen Hego Euskal Herriko lau herrialdeen arteko elkartasuna areagotzen, uztailaren 21eko legeak Nafarroan eraginik ez bazuen ere. Berehala, Bilbon, Euskal-Erria Elkartea sortu zen eta, Iruñean, Nafarroako Euskarazko Elkargoa. Bi elkarteak interesatuago zeuden Lege Zaharraren hondarren babesean euskaran baino, baina euskaltzaletasuna zabaltzen lagundu zuten, epe luzera begira berezko hizkuntzaren aldeko borrokari on eginen ziona.

Hego Euskal Herriko mugimendu foruzaleko ordezkariek ia beti gaztelaniaz idazten zuten. Baina, horrekin batera, Ipar Euskal Herrian, mugimendu euskaltzale bat sortu

zen. Bi mugimendu horien arteko loturak oso lausoak dira. Agosti Xaho zuberotarrak, aitzindari bakartiak, *Uscal-Herrico Gaseta* lehen euskarazko astekariaren bi ale argitaratu zituen 1848an. 1851n Lore Jokoak, garai hartako euskaran «Koplarien Guduak» deitzen zirenak, ospatzen hasi ziren, Anton Abadia-Ürrüstoi zuberotar mezenas bonapartistak sustaturik. Herrialde Katalanekin alderatu baino lehen, horietan Lore Jokoak 1859tik aurrera ospatu baitziren, argitu behar da Bartzelonako eta Valentziako Jokoak kalekume ikasiek antolatu zituztela, Koplarien Guduei gehienetan baserritar kutsua darien bitartean, abarkadun giroa ez aipatzeagatik. Koplarien Guduek indartu egin zuten euskara eta baserria lotzen zituen irudia eta inplizituki adierazi euskarak ez zuela hiriko bizitza modernorako balio. Hala ere, Koplarien Guduei esker estatuz gaindiko euskaldun kontzientzia piztu zen, euskaran oinarritua, lehenbizikoz akrostiko moduan Iurretako Guduetan, 1891n, dokumentatzen den *Zazpiak Bat* goiburuaren inguruan. *Irurac Bat* eta *Laurac Bat* leloek eduki politikoa baldin badute (oso zehaztugabea, baina, ez baitzen adierazten nolako batasuna proposatzen zen euskal herrialdeetarako), *Zazpiak Bat*, hasiera batean, goiburu erabat kulturalista izan zen, hots, «apolitikoa». Izan ere, Sabino Arana baino lehen, inork ez zituen Hego Euskal Herria eta Ipar Euskal Herria estatu bakar batean bildu nahi izan. Areago, 1917-1919. urteetako alferrikako estatutu prozesua arte, ez da probintziaz gaindiko *gobierno vasco* baten eskakizuna dokumentatzen eta «jaurlaritza» hitza bera ez zen 1931-1936. urteetako prozesua arte asmatu. 1902an *Eskualzaleen Biltzarra* sortu zen, Koplarien Guduen oinordekoa, baina haren eragina oso eskasa izan da, Bidasoaz hegoaldean, behintzat, abertzaletasunak kulturalismoa alboratu zuelako.

Paradoxikoa badirudi ere, euskararen alde elkarteak sortu eta agerraldiak antolatzearekin batera, euskararen galera areagotu zen, Araban lehenbizi, Nafarroan gero. 1860an, euskara hizkuntza nagusia zutenak 500.000 ziren, Euskal Herriko bizilagunen % 55, gutxi gorabehera. Nafarroan % 30 ziren orduan. Ekialdeko Euskal Herrian, ehuneko hori % 24 arte gutxituko da 1904rako eta % 17 1935erako. 1860an alfabetatze tasa % 37koa zen Hego Euskal Herrian. Alegia, euskararen galera Nafarroaren eta Arabaren zati handi banatan eskolatzea baino lehenagokoa da eta, zer esanik ez, industrializazioa baino lehenagokoa ere bai. Horrek esan nahi du (hein bateko) galera horren arrazoi nagusia ez dela hezkuntza sisteman edo immigrazioan bilatu behar.

# LEHEN EUSKARA MODERNOA (1745-1891)

BLANCA URGELL

## 1. SARRERA

Lehen Euskara Modernoa (aurrerantzean LEM) Manuel Larramendi josulagun gipuzkoarrak euskara duintzeko egitasmo bat abian jarri zuen unean hasten da. Hasiera zertxobait aurrera liteke haren lehen lanak —apologia (1728) eta gramatika (1729)— irten ziren urteetara, baina haren hiztegi ospetsuaren data (1745) erabili ohi da, horren inguruan argitaratu baitziren haren irizpideetan oinarritutako lehen liburuak.

1745eko dataren balioa sinbolikotik haratago doa, zeren eta hiztegiaren argitalpenak burutu baitzuen euskararen lehendabiziko gramatizazioa (Auroux 1994), hau da, lehenengoz argitaratzea lortu baitzen hizkuntza deskribatzeko, irakasteko eta lantzeko oinarrizko lanabes biak (gramatika eta hiztegia), bai eta horrelakorik merezitzeko argudioak ere (apologia). Ordutik aurrera euskararen izaera eta aukerei buruzko ikuspegi bera, literatur tradizio bera —lapurtera klasikoa— eta, jakina, hizkuntz lanabes berak partekatuak dira gaingiroki Euskal Herriko lau bazterretan. Adostasun nahikoa sumatzen da, halaber, irizpide lexikoetan, eta norabide bertsua grafi sistemaren bilakaeran. Ordea, ez zen estandar bakarra landu, baizik eta lau literatur euskalki (zuberera, lapurtera, gipuzkera eta bizkaiera) —hedadura gutxiagoko hamaika aldaerarekin batera—, nahiz beren artean nahiko homogeneoak eta elkarren eraginei aski irekiak izan; horietako bi euskalkiz gaindiko koine gisa baliatuak izan ziren: gipuzkera Hegoaldean eta lapurtera Iparraldean.

Garai nahasian gaude, Erregimen Zaharraren krisi eta erorikoan. Gerrak, iraultzak eta joan-etorriko hamaika aldaketa politiko ikusiak dira orduko herritarrak. Mendeetan zehar egonkortzat jo zitezkeen balio eta egoerak kolokan jarri ziren, haien artean Euskal Herriko hizkuntzen arteko nolabaiteko oreka. XVIII. mendean Europako elite ilustratuak herriarengandik eta haren ohitura eta sinesteetatik berariaz urruntzen hasitakoan (Burke 1991), Euskal Herrian euskaratik ere urruntzen doaz: nor zirenak edota beren burua aintzat hartzen zutenak gero eta gutxiago moldatzen ziren euskaraz eroso, eta gero eta gehiago erdaraz nahiago zuten. Eliteen ikusmolde eta jokabide aldaketa honek euskararen omenaren galera itzela eragin zuen, eta haren estigmatizatzea arloteen hizkuntza baino ez zelakoan. Izan ere, agerian zegoen hizkuntza ofizialekiko norgehiagokan atze-atzean gelditzen ari zela, Larramendik deitoratu bezala:

> Euskaldunek ez dirudi [euskara] estimatu dutenik, edo behintzat ez dute hala adierazi. Euskal Herritik atera eta ahanzten ahalegintzen dira; ez dute idazten, eta ez dute idatzi nahi euren hizkuntzan ezta gutun bat ere. Euskal Herrian bertan baztertzen dira

> euskara zaintzeko eta haren edertasunak ezagutzera emateko izan litezkeen baliabide guztiak. Ez da ezer irakurtzen, ez idazten, ezta umeei ere irakasten euskaraz; ez dago maisurik bere hizkuntza letreiatu nahi duenik, ezta horretarako gai denik ere. Etxean zein kanpoan ez da izan euskaraz ezer argitaratu duenik herri hauen mesedetan, Lapurdiko liburu bakanak izan ezik, eta hauek ere nekez aurkitzen dira. Euren hizkuntzaz egiten diren txantxak ikusi eta entzunda, haserretu eta samindu besterik ez dakite egiten (1745: liv-lv; itzul.).

Honen ondoriorik behinena Arabako eta Nafarroako toki anitzetan euskara galdu izana da; aldi bertsuan hiribilduetan erromantzearen lekua areagotu zen, lehenagoko euskal komunitate gutxi-asko trinkoaren saretze etengabekoari hasiera emanik.

Hala ere, eliteko batzuk alderantzizko norabidean abiatu ziren. Indarrak ahul dituzte eta etsaiak handi, eta honegatik euren lorpenek ez dute galerak berdintzerik, baina ez dira horregatik mespretxatzekoak ere. Argitalpenak goraka doaz etengabe; honek iradokitzen du, gainera, irakurleen kopurua ere goraka doala, baita haien gaitasuna ere. Literatur hizkuntza finkatuz doa, aberastuz eta zalutuz, eta erlijioaz atetiko gaiak ere jorratuz. Euskararen entzutea indarrez zabaltzen da Europan barrena, Erromantizismoaren haizeak eramanda. Berealdiko lana egiten da etxean eta kanpoan euskara deskribatzen eta aztertzen, eta euskarazko lekukotasun zahar eta berriak biltzen. Euskal literaturaren edozein antologiatan sartuko litzatekeen idazle eskutada batez gainera, XIX. mendean badira euskararen aldeko eragile, bitartekari edota hedatzaile gisa dabiltzanak, gero eta gehiago. Laburbildurik, luzarora hauxe dateke LEMko berrikuntzarik garrantzizkoena: Bilbotik Maulerainoko elite euskaltzale baten sortzea, urria baina ahal bezain trinkoa, euskarari plazan lekutxo bat bederen eginarazi ziona.

Gutxienez hiru zio bildu ziren euskaltzaletasun moderno hori zabal zedin: linguistikoa (hizkuntza duintzea), erlijioso-pedagogikoa (herri euskalduna hezi beharra) eta politikoa (foruen defentsa). Honen bilakaeran abanguardiako hiru une bereiz daitezke: predikazio aldia (Larramendi), herriaren «berraurkitze» aldia (Humboldt, Mogel, Iztueta) eta batasun aldia (Xaho, Abadia, Bonaparte).

Euskaltzaletasunak hasiera du eta elikadura nagusi herritar elebakarren erlijio heziketa bermatu beharra eta, azken batean, haien kontrol ideologikoa. Larramendiren mugimendua komentu eta elizetan errotu zen gehien; esateko moduan elizgizonak dira idazle guztiak 1840 arte, eta gero ere ez gutxi. Euskal Herria ere kontserbazale eta liberaletan —*txuri* eta *beltzak* Hegoaldean, *xuri* eta *gorriak* Iparraldean— banatu zen XIX. mendean, eta liberaletakoak ditugu zenbait eragile gailen, egia, baina jatorriz eta asmoz Erregimen Zaharraren *statu quo*-aren aldeko mugimendua da funtsean, eta ideia liberal eta iraultzaileen aurkakoa (Madariaga 2002).

XIX. mendean zehar jarrera laikoagoak onartuko ditu euskaltzaletasunak, Europan zabaltzen ari zen herria «berraurkitzeko» (Burke 1991) eta lehenagokoaz bestelako «komunitate irudikatu» bat eraikitzeko (Anderson 2011) mugimenduaren barruan. Ideologia berriak herria —funtsean, baserritarrak— antzinako baloreen babesle eta nazioaren espirituaren ikur bihurtzen du, hizkuntza izanik haren adierazpen gorena; beldur dira euskara eta euskal tradizioak azkenetan daudela, eta foruen eta euskal libertateen defentsa funtsatu nahi dute zentralismo espainol eta frantsesaren eraso gero eta antolatuagoen aurka. Diskurtso honi nolabaiteko harrera egingo zaio Hiru Probintzietako Batzar Nagusietan, hain zuzen ere komunitate irudikatu berriaren mugak maizenik probintziarenak baino ez baitira (Esteban 2013).

Larramendiren lanen oihartzunak Iparraldera ere iritsi ziren arren, goiz eta indartsu, hango abiapuntu ezberdinak eta Frantziako Iraultzaren ondorioek ia isilarazi zituzten. Alabaina, esan liteke LEMko euskaltzaletasunaren azken garapen handia Iparraldean errotu zela 1840tik aurrera, eta neurri handi batean handik zabaldu zela. Komunitate irudikatuaren muga berriak *Zazpiak bat* goiburuak laburbiltzen ditu. Euskara kohesio-faktore nagusitzat hartuko da, tradizio komun bat bildu edota asmatuko dute, baita euskara batua aldeztuko eta hizkuntz akademiaren beharra aldarrikatuko ere. Mugaren bi aldeetako euskaltzaleen arteko harremanak ohiko bihurtuko dira. Lore Jokoak bezalako ekimen batek muga zeharkatzea lortuko du urte gutxiren buruan (1851-1879). Era batera edo bestera, euskara lehen mailako ikur bilakatu zen hitz egiten eta lantzen zutenentzat ez eze, baita egiten ez zutenentzat ere, LEMaren azken aldera batik bat.

Azken honek garrantzi handia du: elite ilustratuen diglosiagatik euskal kultura gehiena —euskalaritza barne—, euskal iruditeria moderno gehiena eta euskaltzaletasunaren diskurtsoa erdaraz lantzen dira. 1876an, Hiru Probintziek foruak galdu eta euskal gizarteak bere berezitasunei eutsi behar handiagoa sentitu zuenean, diskurtso hori aise zabalduko da euskarazko kultura ezagutzen ez duten euskaldunen artean, eta are euskaraz ez dakiten herritarren artean ere. Beraz, nahiz euskaltzaletasunak gero eta eragin handiagoa izan gizartean eta haren pentsamendu politikoan —hauexek dira hurrengo garaiaren haziak—, eragin gutxi izango du euskararen normalizazioan, eta are gutxiago euskararen galera etetekotan.

LEMaren amaiera 1876. urte horrexetan jarri ohi da, Euskal Herriko azken foruen galerak euskal letren biziberritzea sortu zuelakoan (Mitxelena 1960b: 137-140). Alabaina, hizkuntzaren historiaren aldetik mugarriak beranduxeagokoak dira: Azkueren *Euskal Izkindea* gramatika (1891), Arana-Goiriren *Lecciones de ortografía del euskera bizkaino* (1897) eta Azkueren hiztegia (1905-1906), literatur hizkuntza eredu berri baten sortze-testuak. Bizkaian aldaketa garrantzizko horiek eratzen ari ziren bitartean, bestetan —Gipuzkoan batez ere— LEMaren ezaugarriak areagotu egin ziren: hitz

larramenditarrak ez ziren behin ere hainbeste erabili, nola *Euskal-Erria* aldizkariak iraun zuen epealdian (1880-1918). Alde honetatik, adierazgarria da Txomin Agirre (1864-1920) eleberrigilearen aldaketa, larramenditarra *Auñemendiko lorea*-n (1898), baina azkuetarra *Kresala*-n (1906). Iparraldean ere ez dago aldaketa handirik, harik eta *Eskualduna* aldizkaria (1887) sortu arte, orduan normaldu baitzen, antza, *literatur nafar-lapurtera* deitu idazmolde berria.

## 2. EUSKARAREN MUGAK ETA EGOERA

LEMan euskararen mugak zehazki deskribatzeko lehenengo ahaleginak egin ziren, herri zerrendak, mapak eta are euskaldunak zenbatzeko saioak ere, giza geografiaren eta dialektologiaren aurrerapenak lagun. Lekukotasun ugari ere baditugu, oso ñabarrak, maiz eremu, leku edo pertsona bakar bati buruzko oharrak, gutxi-asko fidagarri eta argiak. Lan handia egin da material sakabanatuok batzen, guztiz Arabako (Apraiz 1976, Breñas & Otsoa de Alda 2002) eta Nafarroako (Jimeno Jurio 1997, Lekaroz 2014) lur galduetan, baina ematen du asko dagoela oraindik batzeko Euskal Herriaren barruko egoeraren berri behar bezala izan dezagun.[2]

### 2.1. Kanpoko mugak

XIV. mendeaz geroz edo, Euskal Herria —euskararen herria— zazpi herrialde historikoen mugen barruan dago, eta bertan ere aspalditik hertsatuz zihoan handik eta hemendik. LEMan, baina, euskararen historia osoan dokumenta dezakegun galerarik handi eta lasterrena gertatu zen, lehenik Araban XVIII. mendean (§ 2.1.1), eta ondoren Nafarroan XIX.ean (§ 2.1.2). Antza denez, ez dago horrelakorik Bizkaiko mendebaldean (§ 2.1.3) XIX. mende bukaerako Industralizazioa arte; ezta Iparraldeko mugan ere (§ 2.1.4), nahiz lurralde honetan ere euskaldunen kopurua biziki jaitsiko den XIX. mendean zehar, migrazio mugimendu erraldoi bategatik.

#### *2.1.1. Arabako gainbehera*

Mendeetan Arabako euskararen mugak poliki-poliki estutzen ari ziren hegoaldetik eta hegomendebaldetik batik bat, hau da, Errioxako eta Gaztelako lurren mugakide diren alderdietatik. XVIII. mendean zehar, aldiz, erdialdea ia osoki galdu zen. Landazuri historialari arabarrak (1789: 156-159) kontatzen du, adinekoei entzunik, Lautadan bere egunetan

2. Arestian Madariagaren liburua (2015) irten da, baina ez dut garaiz erabiltzerik izan.

hitz egiten ez zen herrietan lehentxeago ohikoa zela euskara, eta bere begiekin ikusi zuen gainerakoetan zaharrek bakarrik erabiltzen zutela. Berak ateratako kontuen arabera, Arabako 53 ermandadeetatik 22tan oraino mantentzen zen, Bizkaiko eta Gipuzkoako mugaren albokoez beste guztietan hala-hola mantendu ere. Bere ustez, galerak bi zio zituen: herrietako apaizek euskararik ez jakitea eta arabarrek gaztelauekin harreman estuak izatea. Beldur zen horrela jarraitzekotan euskara Araban osoki galdu behar zela.

Orduan oraindik euskaraz egiten zen Gasteiztik hegoaldera, Amurrio eta Langraiz bitartetik, Gasteizko eskualdea barne, Mendialdeko Okinaraino. Orduko euskal lekukotasun bakanek ere ekialdeko euskara bizirik zegoela bermatzen dute: Julian Garcia de Albeniz Araiakoa da (Asparrena) eta Antoñanako apaiza (Kanpezu) bere testutxoa idatzi zuenean (1778), eta Joan Batista Gamiz (1696-1773) Sabandokoa (Maeztu). Ordura arte arabarrentzat bakarrik ziren parrokiak eta benefiziadutzak lehiaketa librean aterarazi nahi izan zituen Espainiako erregeak, eta hori dela eta —eta horrexegatik datuak zerbait handizkaturik— hauxe dio beranduxeago Diego Lorenzo Prestamero arabarrak *Pueblos de Álava por Vicarías* eskuizkribuan (c. 1803; Ibisate 2001; itzul.): «Euskaraz hitz egiten dute Gasteizko bikariotzaren herri askok [lehen idaztaldian *batzuek*], Ganboako guztiek, Aguraingo gehienek, Arrasatekoek, Zigoitiakoek, Zuiakoek, Urduñakoek, Aiarakoek, Orozkokoek eta Tudelakoek, zeintzuetan alferrikakoak liratekeen (…) hizkuntza hori ez lekiten apaizak».[3]

Iparmendebaldean, hau da, Aiaraldean bizi-bizirik zegokeen euskara XIX. mendearen hasiera hartan: Gorobel mendilerroko larreak antolatzekotan elkar ulertu ahal izateko, Burgosko Lausa haranako alkate batek Amurriokoari eskatu zion hurrengoan gaztelaniaz zekitenak bidaltzea. Aiaraldekoa bide da, bestalde, XVIII. mendeko Arabako euskararen lekukotasun haziena: *Dotrinazko Sermoitegia* izengabea (c. 1775; Ulibarri 2015).

Landazuriren beldurra egia bihurtu zen hein handi batean. XIX. mendearen bigarren zatian euskara Bizkai-Gipuzkoetako mugaldeko herrietan soilik gorde zen, aski kolokan gorde ere haietako hainbatetan. Honek eragin luzeko ondorio bat izan zuen euskal dialektologian, Bonapartek (1863; §7.4.2), arabera aintzat hartu gabe (cf., ordea, Mitxelena 1958), haren hondarrok bizkaieraren bazterretan sailkatu baitzituen.

Laudio, Astobitza, Altube, Letona, Gamarra (Gasteizen ondo-ondoan), Luku, Ozeta, Narbaiza eta Araia herrietatik igaroko litzatekeen marrak irudika lezake 1850 inguruko euskal eskualde hura. Bonapartek (1850-1870) zehatz deskribatu zuen egoera: Okondon Okondogoiena auzoa euskaldun; Laudion kale, auzo nahiz baserriak;

3. Tudelako bikariotzan Aiaraldeko Artziniega, Lanteno eta Soxo herriak sartzen ziren, besteak beste. Arabako bikariotza hauen mapa Breñas & Otsoa de Aldaren lanean (2002: 71) ikus daiteke.

Aiaran Luiaondo, baina gaztelania nagusi; Amurrion euskara indartsu Baranbion, baina Astobitzan, Lezaman eta Larrinben hiltzear. Saratxon eta Lekamañan gaztelania egiten zen. Zuian ere baziren euskaldunak, baina ez dago lekukotasun xeherik. Zigoitia eskualdean, Etxaguen, San Pedro, Murua, Manurga, Larrinoa, Gopegi, Ondategi, Olano, Zaitegi, Okoizta, Zestafe eta Eribe euskaldun ziren; Berrikaon eta Buruagan gutxienek egiten zuten, baina Letonan, Mendarozketan, Etxabarri-Ibiñan eta Apodakan gaztelaniaz bakarrik. Legution eta Aramaion euskara nagusi. Arratzua-Ubarrundian gehienek euskaraz egiten zuten Betolatzan eta Ziraon, baina Lukun, Uribarri Ganboan eta Landan gutxienek. Barrundian, Elgeak ongi gordetzen zuen, baina Ozetan, Hermuan eta Larrean hiltzear zegoen euskara. Asparrenan baliteke Araian euskaldunak izatea. Beraz, baziren euskaldunak Arabako iparraldeko lau koadriletan, bitan (Aiara eta Zuia) halako indar batekin, eta hiltzear beste bietan (Agurain eta batez ere Gasteiz).

Mendebaldean euskara biziago dago eta, bertakoak dira XIX. mendeko testuak: Jose Paulo Ulibarri okondoarrarenak (1775-1847), Laudioko dotrinak (1828, 1858) eta Ignazio Galindez laudioarraren Ruthen liburuaren itzulpena (1839-1918).

Ez dakigu Arabako euskararen galera nondik etorri zen. Adierazle zenbaitek, hala nola Arabako eskolan eraztuna zigor gisa erabiltzeaz Kardaberatzek dioenak (Cb *EBO* 17, 1761) eta apaiz erdaldunez Landazurik zein Prestamerok diotenak, pentsarazten digute prozesua Nafarroakoaren antzekoa dela (§ 2.1.2), bai eta haren eragileak ere: eskola eta eliza, alegia; zergatik Araban goizago, hori ez dakigu. Nekez egotz dakioke Arabako hiriburuaren eraginari, Gasteiz txikia baitzen artean (6.500 bat biztanle 1802an, arabarren % 10 inguru), baina baliteke eskolaren hedatze goiztar batekin lotua izatea (§ 2.2.1).

### *2.1.2. Nafarroako atzerakada*

Lekukotasunek bermatzen dute bi mendetan (1587-1778) ez zela aldaketa esanguratsurik izan mendebaldean: hegoaldeko muga gutxi-asko bere hartan dago Lizarrako merindadean eta Tafalla aldean; ordea, bada atzerakada garrantzizko bat ekialdean, Erriberriko merindadearen ekialdea ukitzen duena (Erriberri, San Martin Unx, Uxue), eta batez ere Zangozako merindadea.

1778ko eliz auzi bati esker ondo xamar ezagutzen dugu orduan euskara nagusi zen alderdien hegoaldeko muga, sortaldetik Zangozako merindadean Leire aldetik hasi, Erromantzatuko ibarrean sartu pixka bat, Oibarrerantz jaitsi, Bizkaia ibarreko herriak barne, Erriberriko merindadean Orbaibarko hegoaldean barna igaro eta Tafalla zein Lizarra ukiturik sartaldean buka, Lanako ibarraren iparraldean. XVIII. mendearen bukaeran oraindik Tafallatik gorako nafar gehienek, Iruñean bertan ere bai, euskara zuten ohiko hizkuntza —baina ez nahitaez bakarra—.

## Euskara Araban 1850ean




Odón Apraizen zehaztapenak (1850)

Paul Brocaren araberako euskararen hedapena (1868-1874)

Euskal lurraldeak, L. L. Bonaparteren mapan (1857-1869)

**Iturria:** Breñas eta Otsoa de Alda (2002: 83) lanean oinarritutako mapa.

Egoera zeharo aldatu zen hurrengo mendean. Bonapartek bildutako datuen arabera, 1863an hegoaldeko muga mendebaldean Iruñeko merindaderaino atzera eginda zegoen, Lizarra eta Erriberriko merindadeak ia osoki utzirik, eta Zangozakoan diagonal bat egiten zuen hegomendebaldetik iparrekialdera, Zaraitzun eta Erronkarin ere koska batzuk eginik. Sartaldetik sortaldera, muga ondoko herri hauetan zehar zihoan: Ziordia (Burunda), Iturgoien, Estenotz (Gesalatz), Sorakoitz, Artazu (Mañeruibar), Gares (Izarbeibar), Barasoain, Orisoain (Orbaibar), Izko-Besolla (Ibargoiti), Indurain (Itzagaondoa), Artaxo, Mugeta (Longida), Arrakasgoiti (Nabaskoze), Galoze, Uskartze (Zaraitzu) eta Burgi (Erronkari). Muga horren barruan hainbat herritan galbidean zegoen. Gehienak euskaldunak zireneko muga, berriz, Ziordia (Burunda), Iturgoien, Biguria, Jaitz, Izurtzu (Gesalatz), Ibero-Ororbia (Oltza zendea), Garrues, Ezkaba (Ezkabarte), Zabaldika (Esteribar), Beortegi (Lizoainibar), Arizkuren (Artzibar), Galoze, Izize (Zaraitzu) eta Garde (Erronkari) herriek osatzen zuten.

1778-1863 bitarteko galeran azpimarragarriena hauxe: belaunaldi batetik bestera, ia bakarrik euskaraz hitz egitetik gaztelania hutsean aritzera heldu izana. Badirudi hiru faktore nagusi bildu zirela —banakako egoera andana batekin batera—: hizkuntza-presioa areagotzea, batez ere eskolatzearen bidez, euskarak Elizaren babesa ez-arian galtzea eta elite nafarren adostasuna.

Batetik, Borboi erregeek gaztelania Espainiaren mendeko lur guztietan orokortu nahiz bultzatutako politikak Nafarroako gune erdaldunak indartu bide zituen. Herri euskaldunetan gero eta gehiago ziren mediku, eskribau, maisu, eta abar zihoazenak euskararik jakin gabe eta, areago, ikasi nahi ezik. Espainiako gobernuak oinarrizko hezkuntza gaztelaniaz egin beharra ezarri zuen, eta Nafarroako Kontseiluak onartu (1780-1781). Gaztelania eskolan irakastea gurasoen eskaera ere bazatekeen (§ 2.2.1), baina agian denek espero edo nahi ez zituzten ondorioak izan ziren: erdararen goratzea eta euskararen beheratzea, debekatzea eta, azkenik, ez gutxitan herritik erauztea ere. Gorraizko abadeak 1821ean Badoztainen (Eguesibar, Zangozako merindadea) gertatua honela azaldu zuen (Lekaroz 2014; itzul.): «[herria] berez euskalduna da eta euskaraz gaztelaniaz baino gehiago hitz egiten zen eskola-maisua ezarri zen arte, duela hamasei bat urte; ordutik gaztelania sustatu da eta biak erabiltzen dira».

Euskara elizan erabili izana hiztunak hari atxikitzeko elementu eraginkorrenetako bat izan bazen, pentsatu ohi den bezala, Iruñean San Migeleko seminarioa sortzeak (1777) bide eman zuen apaiz euskaldunek euskara alde batera utz zezaten edo bederen herdoil erraztasuna bederen gal zezaten. Aurreko mendeetan ez bezala, ez zen ezohikoa apaiz eta predikari erdaldunak bidaltzea herri euskaldunetara —tarteka lekukotzen diren herritarren kexak gorabehera—, eta are apaiz euskaldun batzuek ere uzkur egingo diote euren zereginak euskaraz egiteari. Ezin da orokortu, jakina: elizgizon batzuek

## EUSKARA NAFARROAN




Euskararen hegoaldeko muga (1935)

Hegoaldeko muga 1778an

Hegoaldeko muga 1863an (Bonaparte)

**Iturria:** Irigarai (1974: 16-17) lanean oinarritutako mapa.

euskarari eutsi zioten, Mendiburu eta Lizarraga idazleak, eta hainbat tokitako euskaraz (Gesalatz, Izarbeibar, Goñerri, Oltza zendea, Eguesibar, Erroibar, Artzibar, Aezkoa…) idatziriko XVIII-XIX. mendeetako dotrina eta sermoi eskuizkribatuak lekuko (cf. Camino 2004). Alabaina, euskaraz ari ziren apaizak goiz edo berandu erdaraz arituko direnek ordezkatuko dituzte herri askotan. Badoztain berean Francisco Miquéliz-ek (1761-1802) bere lanbidea osoki euskaraz egiten zuen, baina Andrés Martín (1802-1821) haren ondorengoak erdaraz predikatzen zuen, eta elebakarrei bakarrik erakusten zien dotrina euskaraz. Juan Agustin de Huarte (1775ean jaioa), Tuteran luzaro bizi ondoren euskara ia ahaztua zuena, Zuluetara joanik (Elortzibar, 1812), herriko guztiek dotrina erdaraz ikasi behar zutela tematu omen zen.

Hori guztia ezinezkoa zatekeen bertako eliteen konplizitatea gabe. Hona adibide adierazgarri bat: Eliz auzitegietan bi txanda izateko ohitura hautsi eta txanda bakarra ezarri zuen Iruñeko apezpikuak 1765ean, alegia, herri euskaldunetara txanda hartzaile euskaldunak derrigor bidaltzeari muzin eginda; aldaketak Gipuzkoako herri anitz ere ukitzen zituenez, hala Aldundia nola bertako apaizteria protestaka abiatu ziren (1768), eta zenbait urte geroago (1771) oraindik baziharduten irtenbide bila. Nafarroan, ostera, ez zen horrelako erantzunaren izpirik ere izan.

### *2.1.3. Mendebaldeko muga*

LEMan oraindik ere badira bertako euskaldunak Bilbotik harago (Ros & Saiz 2001), baina lekukotasunak ugaritxo izan arren zaila da zehazten euskarak zein herri edo auzotan zirauen eta zein egoeratan.

Enkarterrietako mendebaldeko eremua erromantzez mintzo zen X. mendetik gutxienez. Toponimiaren arabera hizkuntza muga batek banatzen zituen erromantzea sartaldean eta euskara sortaldean, barnealdean Balmaseda alde batean eta Zalla bestean utzirik, eta kostaldean Santurtzi batean eta Portugalete bestean, baina mendeak joan, mendeak etorri, muga ekialderantz mugitzen joana zen artean. XVIII. mendearen bukaeran euskara zenbait inguru geografiko eta sozialetara mugatuta dago. Galdames, Gueñes eta Gordexolan XVIII. mende bukaera eta XIX. mende hasiera bitartean galdu bide zen. Ia ez dago berririk Trapagaz eta Sestaoz, baina antzeko egoeran zeudekeen. Berriz, Zallaren galera lehenagokoa da zalantzarik gabe.

Euskara kolokan dago, baina badirau XIX. mendean zehar Barakaldon, baita Alonsotegin ere agian. 1795ean, Barakaldon euskaraz eta erdaraz egiten zen. XIX. mendearen hasieran, Añibarro misiolari frantziskotarrak herri euskalduntzat jo zituen Barakaldo, Bilbo eta Portugalete, eta erdalduntzat Enkarterriak oro. Uriartek Bonaparterentzat egin zuen datu-bilketa garaian (1864-1866) Barakaldoko baserrietan bazen oraindik euskaldunik. Udalerriaren industrializazioak inmigranteak uholdeka etorrarazi —1877-1887 bitartean

biztanleen kopurua halako hiru hazi zen—, baserritarrak ere industrian lanean hasi eta honek guztiak eman zion azkena, antza denez, bertako euskarari.

#### *2.1.4. Iparraldeko muga*

1806an Frantziako Barne Ministerioaren aginduz Inperioaren hizkuntza mapa egin zen (Oyharçabal 1992). Lan honen emaitzak funtsean bat datoz Bonaparterenekin (1863-1869): Biarritz, Angelu eta Baiona —iparmendebaldeko herri handiak, hizkuntzaz gaskoiak— euskal eremutik kanpo daude, bai eta Lapurdiko iparrekialdeko eta Nafarroa Behereko iparmendebaldeko batzuk ere (Ahurti, Bastida, Gixune eta Bidaxune); Zuberoako Montori, Jestaze eta Erribareitan euskara eta biarnesa neurri berean erabiltzen ziren; Eskiulan (Biarno) batez ere euskara entzuten zen; eta mugaren alde erromantzeko herri askotan euskara ulertzen zuten.

Mugak, beraz, bere horretan jarraitu zuen LEMan zehar, baina honek ez du esan nahi euskaldun kopuruak ere bere horretan jarraitu zuenik: aitzitik, XIX. mendean zehar Lapurdiko kostaldea turismo-leku bilakatu zen bitartean, barnealdeko herriak jendez husten joan ziren, askok emigraziora jo baitzuten, guztiz Ameriketara. 80 urtetan 163.000 biztanletatik ofizialki ia erdiak emigratuak ziren —isilean, 100.000 baino gehiago omen— (Arbelbide 2011: 22-23; ik. Aldekoa 2004: 91, honek literaturan izan zituen ondorioetarako).

### 2.2. Barneko mugak

LEMaren bukaeran euskal herritarren erdiak inguru euskaldun ziren. Velasco arabarraren datuen arabera (1879: 479-490),[4] banaketa hauxe liteke: Gipuzkoa (% 96), Bizkaia (% 81), Iparraldea (% 64), Nafarroa (% 20), Araba (% 10). Esan gabe doa 1745ean, Arabako eta Nafarroako bat-bateko galera baino lehen, nahikoa gehiago zirela. Gipuzkoan, Larramendiren arabera (1754: 285), lau gipuzkoarretan hiruk ez zuten erdara ulertzen, eta mendetsu bat geroago Iztuetak (1847, Izt *C* v) diosku 120.000 biztanletan 100.000 (% 83) elebakarrak zirela; «gañerontzeko ogei millaetan» erdiak baino gehiago arrotzak, eta besteetan «izango dira gitxienaz sei millaraino, euskaraz txarki eta gaztelaniaz gaizki itz egiten dutenak». Salbuespenak salbuespen, Iparraldeko eta Bizkaiko egoera antzekoa zatekeen.

---

4. Bere datuak zalantzan jarriak izan dira; halere, nahiko txukun jokatu zuela ondorioztatu behar dugu, zeren eta oso antzekoak baitira Erizek (1997, *apud* Aizpuru 2001: 31) metodo modernoekin 1863rako atera dituen emaitzak: Bizkaia (% 81,43), Araba (% 9,59), Nafarroa (% 30), Iparraldea (% 65,04), Gipuzkoa (% 96,42).

Gaurko egoerarekin erkatuta ezberdintasunik handiena honetan datza: diglosiagatik ere, ia ez zegoen elebitasunik gehiengo euskalduna bizi zen lurralde zabal xamarrean. Oraindik ez zeuden —baina XIX. mendean zehar agertuko dira— euskara bertan ere saretuko duten eragile nagusiak: derrigorrezko soldaduzka, oinarrizko eskola beharrezkoa, trenbidea eta prentsa, besteak beste, eta estatuak eurak oraindik ez ziren hezkuntza eta hizkuntza politika eraginkorrik garatzeko gauza.

Elebitasuna arrazoi geografiko eta soziokulturalekin lotua agertzen da. Geografiaren aldetik, hiribilduetara mugatuta zegoen. 1806ko *La Gazette de Biarritz*-eko artikulu baten arabera (*apud* Sagarna 1984: 41), Baionan ez zen sekula euskaraz egiten, baina handik legoa erdi batera frantsesik ulertu ere ez omen zen ulertzen: zalantzarik gabe, *mutatis mutandi* horrelako zerbait zatekeen gainerako euskal herrietan. Garaiaren hasieran, gainera, elebitasunak muga linguistikotik hurbil zeuden hirietan soilik zeukan egiazko pisua, hala nola Bilbo, Gasteiz, Lizarra eta Tafalla (Camus & Gómez Seibane 2012), edo erromantze tradizio luzekoetan, hala nola Iruña eta Baiona, enparauetan —Donostian, adibidez— gutxiengo batzuk baino hartzen ez zituen bitartean: kanpotarrekin harremanetan zeudenak, eskola pixka bat behintzat zutenak eta oligarkiakoak (Gómez Seibane 2012). Hiribildu oso elebidunek bazuten ingurumariak erromantzatzeko gaitasuna eta, bestalde, haietan euskal eta erdal aldaki nahasiak sortu ziren. «Bilbon [euskaraz] gaizki hitz egiten da» zioen Larramendik (1745: xxviii; itzul.), eta ez du besterik adierazten Mogelek (1800, *CC* xv) *Ené, ara toroa plazaan manzania jaaten* perpaus ospetsuaz egin zuen erretratu zorrotzak. Erromantzeari dagokionez, ongi dokumentaturik daude Iruñerriko aldakia (lehen erreferentzia 1863koa da; González Ollé 1970) eta Bilbokoa (Arriaga, *Lexicón bilbaíno,* 1896).

Ikuspegi soziokulturaletik, berriz, Larramendik honela azaldu zuen Gipuzkoako egoera:

> Gaztelania ulertzen dutenak elizgizonak, erlijiosoak, ikasitakoak, zaldunak, Gaztelan hazitakoak; eta halatsu, gaztelania hala-hola ulertzen dute herri txikietan alkate edo kargudun izan daitezkeenek, merkatariek eta dendariek. Emakume eta andereetan gutxi dira begien bistako eta eguneroko gaiez bestelako gaztelania dakitenak. Hauek guztiak bilduta ere ez dira oraindik Gipuzkoako laurdena; eta laurden horretan gehienek ez dakite gaztelaniaz, euren zeregin eta harremanetan jarduteko behar dutenaz besterik (1754: 285; itzul.).

1750ean Hernaniko Real Fábrica de Anclas-eko kontramaisu nagusiak bazekien irakurtzen eta idazten, baina gaztelaniaz gaizki moldatzen zen, eta gainerako kontramaisuek ez irakurtzen, ez idazten, eta euskaraz beste hizkuntzarik ez zekiten (Sagarna 1984: 40). Oro har, alfabetatzea eta erdaraz ikastea batera zihoazen, eta alfabetatze tasa hiru aldagairen mende zegoen batez ere: hiritartze maila, lanbide mota

eta sexua (Madariaga 2002: 573; cf. Oyharçabal 1997: 85 ere); tasa handia zen lanbide liberaletan eta funtzionarioen artean, aldakorra marinel, artisau eta merkatarietan, baina soldatapekoak eta nekazariak, ia osoki analfabetoak, gehienak elebakarrak ziren.

Larramendiren «emakume eta andereetan» horrek adierazi bezala, are goimailakoen artean ere bazen genero bereizkuntza nabarmenik honetan: izan ere, ez dirudi kasualitatea denik Kardaberatzek (Cb *EBO* 39-44) bi emakume hautatu izana euskal erretorikaren erakusgarri, bata Donostiako «errekardaria» eta bestea Elorrioko «etxandera». *Gran tourra* antzerkitxoaren protagonistak (Alzibar-Jauregi 1772) ere etxeko andrea, jostuna eta neskemena dira. Datu hauek geografikoekin gurutzaturik, ondorioa da hiribilduetan behemailakoek euskaraz egiten zutela, nahiz erromantze pixka bat ere jakin, eta handikiek eta merkatariek alderantziz.

Eliteko gizon askok oraindik euskara zuten ama-hizkuntza. Alabaina, guztiak beren-beregi erdaraz heziak ziren, maiz horretarako kanpora bidaliak, eta baliteke, hortaz, herri xeheak baino erraztasun gutxiago izatea euskaraz; maiz atzeman euskara galdu ere galdu zuten. Pedro Agustin Girón y las Casas donostiarrak, Ahumadako lehen duke eta Guardia Zibilaren sortzailearen aitak, idatzirik utzi zuen txikitan euskara besterik ia ez zekiela, baina behin Madrila eramanda «…ez diot barkatzen amari euskara ahazten utzi izana (…), baina nik gaztelaniaz ondo eta arin hitz egiteko desioak eraman zuen hutsegite honetara» (Imizcoz 2001: 111; itzul.). Euskal Herrira itzultzekotan, baina, berriro ere euskararekin topo egin behar, nahitaez, eta ondorenak honela deskribatu zituen Kardaberatzek:

> an, burla ta lotsa andien kostuan badere, erdaraz ikasten dute; ta nola euskera kendu zieten ta jarduten ez duten, beren erri edo etxeetara biurtzean alde guzietara barregarriak oi dira; ta egiaz esan oi da: gaztelania ez ikasi, ta euskera bai aztu. Gero emen lotsa andiaz dakuskuna: ez itz egiteko, ta ez elkar aditzeko, erdarazko ta euskarazko naspilla moldakaitz eta nazkagarri bat enzun oi da (1761, Cb *EBO* 18).

Tolosan XVIII. mendearen hasieratik handiki, elizgizon eta lanbide liberaleko batzuk letragizonak ziren, hizkuntza jasoak menderatzen zituztenak (latina, frantsesa, agian grekoa ere) eta erdara beren arteko ohiko hizkuntza zutenak (Jimeno Jurio 2012: 93-94). Horrelakoek ziurrenik zenbait egoeratan bakarrik zerabilten euskara: amarekin, adibidez, eta euren agindupeko eta auzoko elebakarrekin.[5] Intimitatearen edo kidetasunaren

---

5. Peñafloridaren *Borracho Burlado* antzezlanean (1764) behemailako pertsonaiek egiten dute euskaraz, baita handikiek ere haiei zuzentzen zaizkienean, baina sekula ere ez beren artean. Juaristik (1987: 63), beraz, elebidun baino gehiago diglosikotzat hartzen du, nahiz Billelabeitia (2013) ez izan iritzi berekoa. Peñafloridak azaldu zuen bere lehen asmoa obra osoa euskaraz

adierazgarri ere bazekiten erabiltzen beren artean; horixe adierazten du, hain zuzen, salbuespen bakanekin erromantzez idatzia den gutuneriak, non euskara aldizka bakarrik agertzen baita, dela agurretan (*Berorrena guztia, Zure adiskide aundiena, Agur, zure-zurea beti…*), dela isileko hizkuntza gisa (Sagarna 1984: 44-45).

Diglosiak Erdi Arotik hartua zuen Euskal Herria: zein ere zen beste hizkuntza, latina edo kasuan kasuko erromantzea, euskara administraziotik, hezkuntzatik eta jakintzatik kanpo geratua zen, eta ahozko esparrura mugatua. Hala bada, hizkuntza gizarte muga larri bat zen, eskolatzea ordain ez zezaketenen aurrerabidea eragozten zuena eta dirudunek erakundeak menderatuko zituztela bermatzeko modukoa. Dena dela, artean normaltzat jotzen zen herria euskaldun izatea: auzitegietan eta elizan eskubide zenbait aitortzen zitzaizkion, eta honetan auzietako txanda hartzaileek, eskribauek eta apaizek hizkuntz bitartekari egiten zuten (Madariaga 2002: 568). XVIII. mendean aspaldiko egoera hori usteltzen hasi zen euskararen kaltetan. Honetan kanpoko zerek, hala nola gobernuen erabakiek eta egoera soziopolitiko aldakorrak, anartean baino eragin handiagoa izango dute, dudarik ez. Alabaina, badirudi barneko joerek izan zutela eragin gehiena, alegia, hizkuntz prestigio arrazoiek eta interes ekonomikoek.

Alde batetik, semearen[6] aurrerabidea nahi zuten familiek oro lehenik bermatu behar zuten gutxienez lehen letrez gain (irakurtzen, idazten eta kontuak egiten) erdaraz bazekiela, zeren erdalduna behar baitzuen izan administrazioan zein merkataritzan aritzeko, bai eta Elizan edo Armadan nolabaiteko karrera izateko ere. Mugikortasun sozialik egon zen heinean, ekimen pribatuak aurrea hartu zien maiz erakundeei erdarazko eskolatzea bultzatzen.

Bestetik, euskal eliteak, Argien Garaiko *aldaketa zibilizatzaileak* barneraturik (Elias 1993 [1939]),[7] gero eta herri kulturaren aurkakoago bihurtu ziren (Esteban 2013),

---

egitea izan zela, baina ez zuela elkarrizketarako egokia zen hizkerarik aurkitu, Azkoitiakoa erabiliz gero bestetako ikusleak gaitzituko zirelakoan, eta Beterrikoa erabiliz gero, «zaila zatekeen [antzezle] guztiek ondo imitatzea» (*BorrB,* «Advertencia del autor»; itzulp.). Egiatan, badarabil euskara elkarrizketetan, baina aipatu kasuetan bakarrik. Ondorioa nabarmena iruditzen zait: ez zuen aurkitu euskaraz pertsonaien klase ezberdintasuna adierazteko modurik, zeren inguruko pertsona ikasiek behemailakoen euskara beraz besterik ez baitzuten egiten, hots, ez zuten ezberdintasun diastratikorik sortu, kontu fin eta jasoak gaztelaniaz adierazten zituztelako.

6. Berariaz diot *seme*. Hauxe dio Agirre Asteasukoak neskatxen eskolatzeaz: «Neskatxentzat ere txit gauza ona da eskola era ['aukera'] bada, ikasi dezeen dotrina, goiz-arratsetako jaiera, sakramentuak ongi artzeko prestaera, elizan modestiarekin egotea eta meza entzuteko modua. Asko da au neskatxentzat, bada eskribitzen jakitea, batzuentzat ona izan arren, geienentzat kaltetsu izan liteke» (c. 1808; *apud* F. Altuna 1999: xxi).

7. «Aldaketa zibilizatzaileak» zibilizatze-prozesuaren barnean Gizateriaren historian unean-unean

tradizioak, erlijio-adierazpenak, jaiak, dantzak, erromeriak… herri usaina zuen guztia arbuiaturik. Hala bada, arrail sakon bat sortu zen, gurea bezalako gizarte diglosikoetan kulturari bakarrik ez zegokiona, hizkuntzari ere baizik. Jadanik Iztuetak (1824, Izt *D* 93) elkarrekin lotu zituen eliteek plazako dantzak txarrestea eta euskara galtzea.[8] Ezagunak dira Larramendiren eta Mendibururen arteko tirabirak honi dagokionez (Altuna 1982: I, xxxii-xxxiv), eta ezagunagoa agian frai Bartolome Santa Teresarenak dantzen aurka atera zuen liburua (1816). Jadanik 1717an, non eta Tolosan, alkatea eta bikarioa liskartu omen ziren San Juanetako bordon-dantza zela eta, hain zuzen, zertan eta gaztelania hutsean (Jimeno Jurio 2012: 164).

Eliteek erromantzez *ere* jakitea ez ezik, ordura arte ohikoa zenez, euskaraz ez zekitela erakustea dotoreziaren seinale bihurtzen ari zen, edo jendaurrean ez hitz egitea behintzat, Larramendik gogor salatu zuenez (1754: 287-288), Iztuetaren arabera (1847, Izt *C* v) «beren buru arroak gizon andi ta jakintsu egiteagatik». Frantsesa eta gaztelania —kohesio eta aurrerapenaren eragile gisa aldarrikatuak— jende fin, letradun eta aberatsen hizkuntzak dira eta euskara baserritar, txiro eta ezjakinena. Jakina da Urrezko Mendeko Espainiako literaturak «bizkaino» delakoaren figura barregarria sortu zuela, baina ez da hain ezaguna, nahiz biziki adierazgarria izan, XVIII. mendearen erdialdean sortu zela, non eta Bilbon, «arlote» delakoarena, etengabe *arlotadas* 'arlotekeriak' egiten dituen eta, nola ez, erdaraz gaizki moldatzen den baserritarra, ondoko bi mendeetan oso hedatua (Etxague 2012: 41-42).

Funtsezko aldaketa hauek ezinbestean desorekak sortu zituzten sisteman. Eta desoreka horietako batek behintzat pendulua bestaldera egiten hasi zedila lortu zuen, alegia, elite batzuek euskararenganako hurbiltze mugimendu bat abian jartzea. Zehazki, Hegoaldean kezkaz ikusten zen elizjendeak euskara alde batera uztea, dudarik gabe honek gizartearen ordena kolokan jar baitzezakeen: izan ere, Elizak bere gain zeukan herria hezteko erantzukizuna, ez bakarrik kristau dotrinan, baita ohitura onetan eta agintarien errespetuan ere. Kezka honek halako erantzun bat sortu zuen 1745etik aurrera, Larramendi ideologo eta bultzatzaile nagusi zuena. Berak eta bestek euskara duintzeko asmoa ere buruan zuten arren (§ 3.1), luzaz, ia mende batez, eragileagoa izan zen herria zuzen doktrinatua zela ziurtatzea. Hartara, elizgizonen motibazioa suspertzen eta haien lana errazteko moduko hizkuntz lanabesak (gramatika, hiztegia) eta oinarrizko testuak (dotrinak, sermoitegiak) sortzen jarri zen arreta gehiena.

---

gertatzen diren planifikatu gabeko eraldatzeak dira.

8. Estebanen (2013) ustetan, eliteen eta herriaren arteko banaketa argi islatzen da Peñafloridaren *Borracho burlado* antzezlanaren argumentuan.

Dena dela, euskaltzaletasunaren hazia ereinda zegoen (*euskaltzale* hitza J.J. Mogelek erabili zuen lehenengoz 1845ean). Adibidez, Mendibururen *Jesusen amore nekeei…* liburuari (1759) oniritzia eman zion J.J. Amezketa Iruñeko moja batzuen kapilauak, liburua apaiz euskaldunei gomendatu zien, euren lanerako laguntza handia aurkituko zutelakoan, baina baita zeren «hemendik beste onura bat etorriko zaio euskarari (…), eta da berpiztea, nolabait esanda, bere antzinako xalotasun eta garbitasunaren bizitzara eta hitz jator, samur eta berezkoez horniturik uztea» (itzul.).

Bigarren une batean, jadanik XIX. mendean, tradiziozko baloreen zaintzaile eta nazioaren espirituaren berme bezala herria «berraurkitu» nahi zuen mugimendu europarraz kutsatu zen euskaltzaletasuna (Esteban 2013), eta honek laikoak ere erakarriko ditu alorrera. Ideia aurre-erromantiko eta protonazionalista haiek, hizkuntza eta *Volksgeist*-ekin lotuak, Wilhelm von Humboldt ospetsuak ekarri bide zituen Euskal Herrira (1799-1801), eta hizkuntza eta nazio-espiritu propioa gorde duen Euskal Herri baten irudia berak hedarazi zuen (Madariaga 2002: 572). Litekeena da Mogelek berarengandik hartzea horrelako ideiak, harremanetan egon baitziren (cf. Altzibar 1996); nolanahi ere, herria hizkuntzaren zaintzaile gisa *Peru Abarka*-ren ardatza da (c. 1802). 1881 arte argitaratuko ez bada ere, kopia eskuidatzitan aski zabaldu zen; baserritarren bertute tradizionalak goraipatzen ditu eta erakusten du «nekazari euskaldun bat izan daitekeela doktor eta maisu bere hizkuntzan» euskaldun erdi-ikasi eta erdi-erromantzatu kaletarrarentzat (Mg *PAb* 6-7; itzul.). Diskurtso hau denborarekin sendotu eta hedatuko da, hizkuntza eta tradizioak uztarturik, lehenik Iztuetaren dantzen aldeko liburuan (Izt *D,* 1824; Esteban 2013) eta geroago Xahoren lanetan eta ondokoetan. Euskal tradizioak berpiztea helburu izanik, bilketara ez ezik, «tradizioaren asmakuntza» deitu izan den horretara ere joko dute (§ 3.1.3.1).

Halere, badira euren lana euskararen oroitarri gisa ulertzen dutenak ere. Araban eta Nafarroan galera hain da bat-batekoa, barneko indarrak ere hain dira ahulak non-nahi, non maite dutenak eta lantzen dutenak ere beldur baitira euskara goiz edo berandu hiltzera kondenatua dela, oro har Europan hiltzear dagoen herri-kulturaren beldurra hedatu zen modutsuan (Burke 1991). Hileta Humboldtek jo zuen lehenik (c. 1800). Ezkor ditugu Iturriaga maisu eta idazlea (1830), Ramon Gereka Gipuzkoako Aldundiaren idazkaria (1856, Lard *Gram* ii) eta Aizkibel euskalaria (1856). Elisée Reclusek ere bazioen (*apud* Broca 1874) Iparraldean frantsesa ari zela nagusitzen herri askotan, eta hauetatik hedatuz zihoala inguruko landetara. Ez du iritzi hoberik Vinsonek (1882). Giro honetan sortua da Arrese Beitiaren *Ama euskereari azken agurrak* poema (1879).

Aldi bertsuan, eliteek gero eta behar gehiago dute herriarengan beren burua zuritzeko eragile politiko bezala (Esteban 2013) eta haren pentsamenduan eragina izateko. Bigarren ildo hau Hegoaldean zentzu probintzialista batean islatu zen: probintziak «komunitate irudikatuaren» mugak definitzen ditu, bera da lurralde nagusia, ongi antolatutako eta

antzina-antinatik eraikitako gorputza. Mezu hauxe da Iztuetaren *Kondaira*-ren ardatza (1847); ez da kasualitatea, bada, Gipuzkoako Aldundiak argitalpena ordaindu eta hedarazi izana.

Honela edo bestela, garaiko gorabehera politiko larriak zirela eta, euskara herriarengana iristeko ezinbesteko bitartekotzat hartzen hasi ziren erakundeak, eta honek badu islapenik hala Frantziako gobernu iraultzailearen erabakietan (§ 2.2.2) nola Hiru Probintzietako Batzar Nagusiek —edo ordezkarietako batzuek behinik behin— egin adierazpen eta keinuetan (§ 2.2.1). Honek euskararen presentzia, ordura artean isildua, ageriko bihurrarazi zuen: euskarazko itzulpen eta argitalpenak, eta euskararen aldeko ekimenak egin ziren lehenengoz. Euskara eskolara eraman nahirik ere aritu ziren batzuk, erdara ikasteko bitarteko gisara baino ez bada ere.

Tartean, diskurtso ezberdin bat eratzen ari zen, Euskal Herria bere osotasunean kontuan hartzen zuena. Baliteke honen lehen islapenetakoak izatea Dominique Joseph Garat lapurtarraren *Exposé succint d'un projet de réunión…* (1808; § 2.2.2) eta Juan Antonio Zamakola bizkaitarraren *Historia de las naciones bascas* (1818; Madariaga, a.e.), baina erpina joko du 1840tik aurrera. Xahok «berrasmatzen» duen tradizioa jadanik euskaldun guztientzat aurkeztua da, eta aintzat hartua Euskal Herri osoan. Urte bertsuetan ortografia bakarraren, hizkuntza batuaren edota akademiaren alde jardun zuten Ulibarri, Erro, Aizkibel, Xaho, Abadia, Duvoisin eta Hiribarrenek: azken honi *euskaltzain* izena zor diogu. Dudarik gabe Antoine Abadiak, aita zuberotarra zuen dublindarrak, eta Luis Luciano Bonaparte frantsesak bultzada handia eman zioten euskararen inguruan bilbatutako Euskal Herriaren kontzeptuari, beren lan eta izenarekin muga alde batetik bestera zeharkatzen jakin baitzuten, eta bi aldeetako euskaltzaleen arteko harremanak errazten. Ordainetan, hizkuntza gai politiko bihurtzen da, eraso eta apologia zein baino zein zoroagoen artean (Hegoaldeaz, ik. Madariaga 2002: 570; Iparraldeaz, § 2.2.2).

### *2.2.1. Euskararen egoera eta bilakaera Hegoaldean*

XVIII. mendean ez dago derrigorrezko irakaskuntzarik —ez hemen eta ez inon—. Beraz, behemailakoek toki askotan ez zuten besterik ikasten, apaizek eta predikariek kristau dotrinaz emandako ahozko irakaskuntzaz besterik. Oinarrizko eskolak udalek gobernatzen zituzten gehienbat eta, soldata oso txikia zenez, familiek zerbait ordaindu behar zioten maisuari: denek ezin zuten, ezta gehienek ere, oraindik ere 1887ko erroldako analfabetismo tasa garaiak adierazi bezala (INE):[9] Araba (% 37,8), Bizkaia (% 54,7), Gipuzkoa (% 54), Nafarroa (% 53,7). Espainiako indizearekin (% 69,4)

9. 1887koa ematen dute lehen errolda fidagarritzat historialariek (Imizcoz, a.e.).

erkatzeak erakusten digu jakina den zerbait, hots, Hego Euskal Herria Espainiako lurralde alfabetatuenetan zegoela, eta gertakari hau lotu da XVIII. mendean lurraldeotan izan zen oinarrizko eskolen hazkundearekin. Berriz, Arabaren tasa apalak azal lezake, hein handi batean, haren deseuskalduntze goiztarra, gaztelaniazko eskolaren hedatze arinago batekin lotuz gero.

Eliteentzat lehentasunezkoa zen semeek gaztelaniaz ikastea. Honela prestatzen zituzten karguak hartzeko edo merkataritzan aritzeko, dela Penintsulan dela Ameriketako kolonietan. Euskal herritar batzuek aitoren semeak zirela aise frogatzea bazutenez, gizartean gora egiteko bide honek elite berriak sortu zituen XVII. mendearen bukaeran hasita XIX. mendearen hasieran koloniak galdu arte. Elite berriok euren ahaideen heziketa sustatu nahirik, maiz jaioterrietan maisutzak (maisua kontratatzeko dohaintzak) sortu zituzten. Honen ondorioz izugarri emendatu ziren herrietako oinarrizko eskolak, Estatuak eta aldundiek hezkuntza politika garatu baino lehenago, baita eremu txiro, baserritar, euskaldun eta berez hezkuntza eskaerarik egon ohi ez zenetan ere (Imizcoz 2001, 2014). Baztanen, adibidez, 1797an jadanik bederatzi eskola zeuden eta 300 ikasle baino gehiago, eta Bizkaian XIX. mendearen hasieran 42 udalerrik eskola bana zuten bederen. Helburu zehatz honek eragin zuen oinarrizko eskoletan maisuei agindu zekiela euskara debekatzeko, hala eskolan nola hortik kanpo. Erraza da euskararen debekuari buruzko aipuak aurkitzea —baita eraztunaren zigorraren aipuak ere— Gipuzkoako herriek maisua kontratatzeko jartzen zituzten baldintzetan (Aia 1784, Elgoibar 1787, etab.; Sagarna 1984: 47-48).

Ondorioz, XVIII. mendean inortxok ere ez zuen euskaraz idatzi edo irakurtzeko gaitasunik eta, hartara, ez zegoen ez euskal liburu eskaerarik, ez horrelakorik egiteko ardurarik ere (Oyharçabal 2001b: 254-264). 1745 arte argitaratu ziren liburu urriak eta apalak, gehienak dotrinen egokitzapenak dira (6. kap., § 1.2.2), hain justu apaizek euren eliztar eskolagabeak dotrinan ahoz hezteko modukoak.

Haatik, esan bezala, elizgizonei gero eta zailago egiten zitzaien eliztarrei euskaraz egitea, eta batzuek erdaraz nahiago: «Sinisterazo nai digute, aditzen dala gaztelania, are ikasi ez dutenen artean. Ezta hori egia: alperren erausiak eta aitzakiak dirade: hitz banakaren batzuk adituagatik, aizeak daramatzi besteak» zioen kexu Larramendik (1747: 278). Arazoa konpontzeko lehen urratsak ahozko predikazioan eman ziren, ziurrenik Espainian barrena hedatu zen mugimendu indartsu beraren ondorioz: «barneko misioak» direlakoak (Rico 2002). Frantziskotarrek Zarauzko komentua misiolari mintegi bihurtu zuten (1746), preseski predikari euskaldunak hezteko asmoarekin, eta handik gutxira bertako misiolarien lanak Larramendiren beraren bedeinkazioa lortu zuen:

> Zalantzarik gabe, azken urteotan lehen baino hobexeago predikatzen da, eta badira predikalariak bikain eta garbi predikatzen dutenak, entzuleen gozamen eta mesedetan.

> Horrela oro har misiolariak euren sermoietan, eta bereziki Zarauzko frantziskotar misiolariak, (…) euskara argi, ulergarri, garbi eta ondo ordenatutako batean predikatzeko ardura eta lana hartu baitute, hizkuntzaren izaeraren eta sintaxiaren arabera, eta euren egitekoekin gezurtatzen dituzte euskaldun alferren oinarririk gabeko kexak (1754: 291; itzul.).

Erlijio-ordenak izan ziren aurrenak egiteko honetan, Arakistain karmeldarrak Larramendiri idatzi zizkion hitzetatik ere ondorioztatzen denez: «Baina, apaizak bere buruaren estimuagatik eta emulazio duinagatik bakarrik adoretuko direnez, lehen xedea erlijiosoak dira haren [euskararen] garbitasun eta dotoretasun handiagoa lortzeko, zeren eta hauek kitzikatuko balira landu eta dotore izatera, ez baita faltako imitatuko dituenik» (1746, *apud* Fita 1880-1881: 66; itzul.).

Jesusen Lagundiak ere izan zituen izen handiko predikariak, eta horietako bik, Mendiburu eta Kardaberatzek, dotrina, obra aszetiko eta debozio-liburu elebakar duin eta ugari argitaratzeari ere ekin zioten. Irakurleak behar, baina; euskaraz irakurtzeko deia jo zuen Kardaberatzek behin eta berriz: «Lau eguneko ejerzizio piska batekin seguru, erdaraz bezala edo aisago, euskeraz irakurtzera egingo zera» (1761, Cb *EBO* 16). Zalantzarik gabe deiok —eta pulpitotik entzungo zirenek— arrakastaren bat izan zuten: «ikusirik, alde batik, Bizkaiko erritar maiten gai ona, ta misiño denporan asko asten diriala irakurten ikasten…» zioen Añibarrok gerotxoago (1802, Añ *EL*[1] 3).

Harrezkero, zailtasunak zailtasun, XIX. mendean zehar halako berrelikadura-gurpil bat eratu zen: argitaratuen kalitatea eta kantitatea gorago, eta irakurleak gehiago eta hobeak. Bide honetatik euskaldun ikasi multzo bat ere sortu zen, euskaltzaletasuna praktikatu, partekatu eta hedarazi zuena, eta erakundeen akuilu eta euskarri izan zena.

Administrazioan euskara ahozko mailara mugatuta zegoen (6. kap., § 1.2.1). Udal batzarrak euskaraz egin arren leku askotan, agiriak erdaraz daude; Batzar Nagusietakoak ere bai, legeak eta gainerako xedapenak oro, bai eta notario-eskriturak, sakramentu-liburuak, etab. Horrela behar zuela izan barneratuta zuten. Hortik gorako asmoak izan zituen lehendabiziko euskaldunetako bati, J. P. Ulibarriri, honelaxe erantzun zion J.M. Zabala euskalariak (1826): «Nigati forua erderaz geldituko da», zergatik eta honegatik: «Zer, burua galanto ausi liburuac egin ezinik, urtu orreek argitara aterateko or ogeta amar edo berrogei milla errial, ta gero saguak, zedenak ta autsak jateko edo dendeetan eurekaz tabakoa edo piperra salduteko?».

Baina esparru honetan ere arazoak sortzen hasi bide ziren, hiru lurraldeetako Batzarretan lekukotzen diren ekimenen arabera. Bizkaiko Batzarrek zehaztu zuten kontratatuko ziren armadako arduradunak euskaldun izan beharra (1806) eta berdin funtzionarioak (1814): badirudi agerian zela hizkuntz arraila erakundeen ohiko

funtzionamendua kaltetzekotan zela. 1819an Aramaio eta Laudioko ordezkariek Arabako ermandade euskaldunetan oinarrizko eskolan dotrina irakasteko euskara ere erabiltzea eskatu zuten Batzarretan (Cierbide 1996); Laudioko dotrinaren argitalpenarekin (1828) lotu behar ekimen hau, ezbairik gabe. 1830ean Sustapen Elkarte sortu berriari euskara «gorde eta ilustratzeko» neurriak proposa zitzala agindu zioten Gipuzkoakoek. Eta 1833an lehenengoz euskararen erabilera arautu zen Bizkaikoen barne araudian.

Batzarretan euskara nola erabiltzen zen eta horretaz badaude zenbait erreferentzia. Bizkaikoetan (Urrutia 2003) interprete lana ohikoa zen, «gaztelaniaz ondo ez dakiten ahaldunek uler ditzaten [dokumentuak]» (1844; itzul.), eta etxeko kargudunak izendatzen ziren horretarako; alabaina, ahozko erabilera horrek ez du aktako aipuaz beste aztarnarik utzi gehienetan. XIX. mendean Aldundiak lantzean behin testuak itzularazi eta inprimarazi zituen, herrietan haien berri zabaltzeko. Idazle trebatuak hautatu zituzten horretarako: nor eta Bizenta Mogel (1833 inguruan) eta Jose Antonio Uriarte (1843-1867). Bidenabar, gogora dezagun «Abandoko taldea» (Agirreazkuenaga 2008, Artola 2009), Bizentaz gain Juan Jose anaiak eta Jose Paulo Ulibarrik ere osatu zutena, Bizkaiko aldundiaren ingurugiroan «lobby» modura jardun zuen antimoderno eta antiliberal talde bat izan zela.

Irakaskuntzaren auzia ere plazaratu zen. «Are haur eskoletan ere erdaraz ikasten da irakurtzen eta idazten, eta euskaraz ezer ez, eta, oker baino okerrago, debekatzen zaie euren ama-hizkuntzan hitz egitea» zioen Larramendik (1745: lii; itzul.). Arakistainek berari proposatu zion «…atera dezala [berorrek] euskerazko geure sinistamenen jakinbide bat, erderaz aldamenean itzulirik, mutilak eskolan irakurri dagien, erderaz ikasteko arautxo batzuekin» (1746, *apud* Fita 1880-1881: 82). Desira hau aldez bakarrik bete zen, zeren eta, dakigunez, lehenengo josulagun idazleek liburu elebakarrak egitea hobetsi baitzuten (§ 4.1.1.1).

Aparteko aukera sortu zen Euskal Herriko Adiskideen Elkarteak oinarrizko eskola sare bat zabaltzeko asmoa hartu zuenean (1775), baina ez zuten euskara batere kontuan hartu; alderantziz, *amigo alabés* delakoak euren erabakia aurpegiratu zienean, eskolan gaztelaniaz beste hizkuntzarik erabiltzeko debekua (Erregearen aginduz emana, 1768) gogoratu zioten, bai eta eraztunaren zigorra ere, gaitzesteko zirkinik ere gabe.[10]

Salbuespenak egon, bazeuden, denak 1745 ondokoak. Goierriko bi herritan (Zaldibia, 1757; Ataun, 1791) haurrei euskaraz ere irakasteko kontratatu ziren maisuak, baina bakarrak dira Gipuzkoan (Alberdi & Aragón 2004). Kardaberatzek «maestra estimagarri errespeto andiko bat» aipatu zuen, «bere grazia onarekin ta kastigu gabe ume inozente sei urtekoai ere euskeraz, erdaraz ta latinez berdin, txit trebetasun andiaz ta ederki lotsarik gabe irakurten erakasten diena» (1761, Cb *EBO* 19). Ulibarrik (1775-1847) Okondon

10. *Extractos de las Juntas Generales celebradas por la Real Sociedad Bascongada* (1772: 97-101).

umetan bi euskal eskola ezagutu zituen, parrokia bakoitzeko bat, eta gainera ba omen zen hirugarren bat kalean, erdaraz, emigratu nahi zutenentzat (Akesolo 1969: 384). Honek frogatzen du, debekuak debeku, gehiago egin ez bazen, hauxe dela arrazoia, Aizkibelek zioenez (1856: 2-3; itzul.): «Euskal Herriaren patuaren arduradun diren horiek beren hizkuntzarekiko duten utzikeriak eta estimu faltak, liburutegirik gabe, katedrarik gabe eta (lotsagarria da esan beharra) euskara-espainol hiztegirik gabe, hala-holako gramatika bat bederen ere gabe, hain zaharra den hizkuntza hau desagertaraziko dute».

Historia guztian lehen aldiz, Gipuzkoako Batzarrek euskararen aldeko politika esplizituak egitea erabaki zuten (Zalbide 2007a), euren eskumena zen hezkuntzan zehazkiago. 1821ean Agustin Paskual Iturriagari eskatu zioten ikasmaterial elebidunak presta zitzan, Hirurteko liberalaren amaieran asmoa bertan behera gelditu bazen ere. Handik gutxira, Luis Astigarragak *Diccionario manual bascongado y castellano, y elementos de gramática, para el uso de la juventud de (…) Guipúzcoa* argitaratu zuen (1825). 1830ean aipatutako Sustapen Elkartea eratu zuten, bereziki Ameriketako koloniak galdu izanagatik sortu zen egoera ekonomiko larriari aurre egiteko asmoz. Euskara «gorde eta ilustratzeko» proposamena Juan Bautista Erro andoaindar ministro absolutistarengandik (1773-1854) omen zetorren, eta txostena Iturriagari agindu zitzaion ostera ere. Honek, gainera, urte gutxi barru *Arte de aprender a hablar la lengua castellana para el uso de las escuelas de primeras letras de Guipúzcoa* (1741), *Diálogos basco-castellanos para las escuelas de primeras letras de Guipúzcoa* (1742) eta beste ikasmaterial batzuk argitaratu zituen.

Garai hartan euskara eskolan sartzeko zeukaten arrazoi nagusia, agerian denez, ume euskaldunei gaztelania hobeto erakutsi ahal izatea zen, erdara ondo menderatu gabe gainerakoa behar bezala barneratu ezin zezaketelakoan. Ildo honetan lan egin zuen Juan Maria Egurenek ere —lanbidez Gipuzkoan eta Araban hezkuntza-ikuskatzaile aritua— *Método práctico para enseñar el castellano en las escuelas vascongadas* (1867) eta beste argitaratu zituenean (García Aranda 2009; ik. orain Fernández de Gobeo 2017 eta Quijada 2015).

Aldundiaren egitasmoa, Gipuzkoa osoan abian jartzeko dirurik izan ez eta egoerak zapuztu zuen berriro. Dena dela, handik aurrera euskarazko edo euskarari buruzko liburuak argitaratu ziren Aldundiak ordainduta (§ 3.3.9), bai eta herrietara zabaldu ere. Lardizabalen gramatikaz hauxe erabaki zuten Batzar Nagusiek (1855; Gorosabel 1899: I, 398-399; itzul.): «aleak herrietara banatzean, ardura ipin dadila oinarrizko hezkuntzako maisuei behar beste ale helarazteko, euskararen irakaskuntza orokor dadin». Antzeratsu, euskal eskolaren beharraz biziki arduratuta zegoen Ulibarriren bultzadaz, nonbait, 1841ean Bizkaiko Batzar Nagusiek hitzartu zuten egitear zegoen Bizkaiko Institutuan euskarazko katedra sortzea (Akesolo 1975: viii), nahiz asmotik eginetara 1888an baino iritsi ez.

Batzarren jarduera hauek, zeharo ohiz kanpokoak, bat datoz aldundiak gero eta botere gehiago batzen dabiltzan unearekin, XIX. mende hasieratik aurrera (Rubio 1996). Eliteetan hedatzen ari zen ideologia erromantiko eta protonazionalista baina probintziazale honen abantailez ohartu bide ziren (Esteban 2013), eta euren jardueran eta lurraldean euskararen lekua nola edo hala ofizialtzeko joeraren bat izango dute, zeinek bere neurrian, ikusi berri dugunez.

### *2.2.2. Euskararen egoera eta bilakaera Iparraldean*

Aldaketa handiko garaia da XVIII. mendea. Europa osoan ez zegoen frantsesak beste omenik zeukan hizkuntzarik, eta haren indarra Frantzia osoan ere sentitzen zen. Harrietek hain argi zeukan ezinbesteko bihurtua zela jakintza gaietan, non euskaratik abiatuta frantsesa ikasteko gramatika bat egin baitzuen (Ht *Gr,* 1741). Frantsesa jakin behar, halaber, administrazioan, armadan-eta lan egin nahi zuenak. Izan ere, erraztasunak eman beharra sortu zen eliteak Euskal Herrian bertan heziak izan zitezen, eta ez «franzesaren ikhasteko berriz kanpoan despendio handien egitera bortxatuak» (Darreche Ziburuko errotora, Ht *Gr,* «Approbacionea»); honen kariaz, lehenengoz bigarren mailako irakaskuntza antolatu zen Baionako elizbarrutian, Larresoroko Seminario Tipian (1733). Bertako hezkuntza formalak euskara baztertzen zuen; dena dela, jakintzat eman ohi da euskaltzaletasunaren katalizatzaile ere izan zela, bertan aritu baitziren ikasle zein irakasle garaiko idazle ez gutxi.

Oinarrizko eskolatzea gero eta jende gehiagorengana heldu zen, Elizak aldez behintzat kudeatzen eta betiere gainbegiratzen zituen *ororen eskolak* izenekoei esker (fr. «petites écoles»; Oyharçabal 1997). Maila oso apalekoak ziren, jende xeheak irakurtzen ikas zezan euskaraz dotrinan hezi bitartean. Hala agindu zuen Lavieuxville apezpikuak bere dotrinan (*CatLav,* 1733): «Manatzen diotegu eskola nausiei hekin ganat eskolara dabilzan haurrak katixima huntaz zerbitza arazteaz irakurtzen ikhasteko».

Hortaz, maila ertaineko jendea frantsesez irakurtzen ohitu ahala, euskararen idatzizko erabilera gero eta erregistro apalago batean abiatu zen (6. kap., § 1.2.2): euskaldun jende xehe ororen eskoletan doi-doi irakurtzen ikasi duenarentzat egindako dotrinak eta irakurgai xumeak. Astrosen dotrinak (c. 1824, *CatAst* v) argi islatzen du lapurtera klasikoaren garaitik irakurleen gaitasuna jaitsi izana (§ 3.3.5): «Ez ditugu hargatik eman, Diozesa huntako katixima handiak [*CatLav*] aitzinean zuen bezinbat hedadura, beldurrez lotsatuak ['beldurtuak'] guziaren ikhastetik gibelatuak izan ziten, gaineran hortako ahala zuketen giristinoak». Ekialdean pastoralen alderdi idatzia zaindu zutenak, hau da, idazten, kopiatzen eta berridazten zituztenak maizenik *errejentak,* hots, eskola-maisuak izan ziren, gutxienez 1750etik aurrera (§ 4.1.3.2).

Bien bitartean Iraultza etorri zen. Iraultzaileek urte berean testu ofizialak tokian tokiko hizkuntzetara itzultzeko dekretu bat atera zuten (1790-01-14), eta testu ofizialak meza amaitzean frantsesez irakurtzeko agintzen zuen beste bat (1790-10-02). Eta hori zergatik? Mezu iraultzailea herritarren artean zabaldu nahi izanez gero, ezinbestekoa zen tokian tokiko hizkuntzak erabiltzea: hortaz, testu ofizialekin batera bestelakoak ere (kantuak, aldarriak, etab.) itzularazi ziren. Gainerakoan, errepublikazale gehientsuak hizkuntza bakarraren aldekoak ziren: frantsesa nazioaren batasunaren isla eta iturritzat zuten, bai eta berdintasunaren bermetzat ere. Are gehiago, haietako asko Frantziako gainerako hizkuntzen kontrakoak ziren, *patois*-ekiko betiko erdeinuari gaineratu zitzaion hizkuntza hauen eta Elizaren arteko erlazio makurra dela kausa, Eliza ohitua baitzegoen tokian tokiko hizkuntzak baliatzen, bai eta herriaren ideologia pulpitotik menderatzen ere: «Hautsi ditzagun kalte eta errakuntzaren bitarteko horiek. Hobe dugu eskolatu ezen ez itzularazi, guk mantendu beharko bagenitu bezala mordoilo barbaro horiek, hizkuntza arrunt horiek, fanatikoek eta iraultzaren aurkakoek bakarrik balia ditzaketenak» zioen 1794an Bertrand Barère de Vieuzac (1755-1841; itzul.) Konbentzioko hizlari ospetsuenetako batek (bidenabar, gaskoiduna berez).

Iraultzak ekarri zuen Europako lehen egiazko hizkuntza politika (Burke 2006: 186-187). Gobernuak Henri Grégoire-ri eskatu zion txosten bat frantsesa zertan zen ikusteko. Konbentzioari aurkeztu zionaren izena aski ozen mintzo da haren ondorioez: *Patois-ak suntsitzeko eta frantsesaren erabilera orokortzeko beharraz eta bideez* (1794; Bidart 1991; itzul.). Itzulpen politikak gehienez behin-behinekoa behar zuen izan, bada: belaunaldi berriak frantsesez eskolatu ahala alde batera utzi beharrekoa.

Guztiek ez zuten horrela pentsatzen, halere. Dominique-Joseph Garat lapurtarrak (1749-1833), Bonaparteren garaian senatari zenean, Euskal Herri osoa batu eta Frantziaren mendean jartzeko egin zuen proposamenean (*Exposé succint d'un projet de réunión…,* 1808), euskara nahi zuen «Fenizia Berria» deituko zen estatu berriaren hizkuntza bakarra izan zedila eta, jakina, eskolatzeko hizkuntza ere.[11]

Iraultza ondoko garaia ez zatekeen samurra herritarrentzat, eta hainbat gutxiago bertako Elizarentzat. 1790ean *Kleroaren konstituzio zibila* zin egitera behartu eta, apaiz gehienek uko egin ziotenez, iraultzakontrakotzat joak izan ziren, baita haietako 470 batek ihes egin ere (Madariaga 2002: 437); honek guztiok badu islapenik euskal argitalpenetan zenbait urtez (§ 3.3.1). Bestalde, 1794an Itsasuko gazte zenbaitek soldadutzatik ihes

11. Ezin ahaztu lehentxeago Gipuzkoako batzarrek, frantsesek inbaditu eta berehala (1794-08-16, Getarian), onartu zutela lurraldea Frantziako Errepublikari atxikia izateko egin zitzaien gonbita, Espainiarekiko giroa aski gaiztoturik zegoela garbi adierazirik.

egindakoan, Ainhoa, Azkaine, Ezpeleta, Itsasu, Sara eta Zuraide mugako herrietako biztanle guztiak deportatuak izan ziren, eta haien etxe-etxaldeak arpilatuak.

Iraultza denboran ororen eskolak desegin ziren arren, giroa baretu ahala eskola berriak zabaldu ziren. Antza denez, orduantxe argitara zen hauetarako eskuliburu txiki bat, dotrinak bezalaxe galde-erantzunez osatua, bi parte dituena: bat, *Instructionea, gazteriarentçat. Adrien Emperadorearen galdeac sei urthetaco haur bati* eta, biga, *Haurren instructionea, galde eta ihardesteca, edo haur gazte batec necessario dituen eçagutcen moldea* (c. 1801; Oyharçabal 1997). «Katiximarekin hasten zen eskola. Katixima hori, berriz, otoitz batekin hasten zen eta beste batekin bukatzen. Eskuaraz ikasten zen, halako neurri batean, irakurtzen: ik., adibidez, *Abecedea escuaraz iracurten ikhasi nahi dutenentzat* (Baiona, 1805). Hortik abiatu beharra zeukan, hortaz, eskola bidezko frantseste-lanak» (Zalbide 2007b: 110. oh.).

Dena dela, ez dirudi behemailakoak erraz eskolatzen zirenik: esaterako, 1847an Bardozen, 2.500 bizilaguneko herria zelarik, 5-14 arteko mutiletan laurehun bat ez zen eskolara joaten. Gizonetan erdiek baino gehiagok ez zekiten idazten, Baionan ez beste herri guztietan.[12] Eskolak ere kaxkarrak ziratekeen: Hiribarren idazlea kexu baino kexuago zegoen Azkainen umetan izandako heziketaz. 1864an eskoletako hiru haurretan bik, edo agian lauretan hiruk ez zekiten frantsesez: buruz ikasten omen zuten, ezer handirik ulertu gabe (Arbelbide 2011). Honexegatik proposatuko du Arxu eskola-ikuskariak euskaratik abiatzea: «Gramatika elebidun hau onduaz, egileak nahi izan du Euskal Herriko irakasleek izan dezaten bitarteko erraz bat euren ikasleek frantsesa ikas dezaten» (1868, Arch *Gram*: v; itzul.).

Asmoa bai, baina Frantziako estatuak ez zuen hezkuntza menderatzerik —eta Elizaren eskuetatik ateratzerik— izan, harik eta III. Errepublikan Jules Ferry ministroak derrigorrezko hezkuntza doakoa ezarri arte, frantsesez ezarri ere (1881-1884). Ferry hil zenean (1893), Jean Hiriart-Urruti apaiz kazetariak egin zion hilberriaren *Bat gutiago* izenburuak gardenki islatzen du euskal apaiz «zurien» estremismo eta intolerantzia, baina baita *Eskualduna* aldizkarian —bera zuzendari izanik— argitaratzen ari ziren testuen kalitatea. Zeren bitartean hemen ere euskaltzaletasuna hedatua baitzen, elizetatik bestetara zabalduta, tartean xuriek eta gorriek herritarren ideologia menderatu beharrez ari zirela. Esan liteke Iparraldeko euskaltzaletasuna Agosti Xahok eta Anton Abadiak berpiztua zela 1840 ingurutik, 1851tik aurrera Abadiari esker antolatu ziren Lore Jokoek sustatua, eta honen eta Bonaparteren inguruan bildu ziren euskaldun ikasiei esker finkatua. Honi

12. Arazoa bereziki larria zen *barnetako* herrietan, Nafarroa Behereko eta Zuberoako herri txikietan batik bat, non nekez aurki zitekeen ez frantsesik, ez idazten, ez lumarekin sinadura kaskar batez besterik egiten zekienik (1833ko datuak, *apud* Zalbide 2007b: 56. oh.).

erants diezaiogun II. Inperioaren garaian (1852-1870), Frantziako euskualdeetako ondarea biltzeko mugimendu handi bat sortu zela, erakundeek bermaturik, Francisque Michel eta Julien Vinson bezalako jakitunak euskararen mundura erakarri zituena (Casenave 2012: 27). Testuinguru honetan euskal ikasketak biziki aitzinatu ziren eta literatura maila jaso batera itzuli, Hegoaldekoaren paretsura, hain zuzen.

## 3. LARRAMENDIREN ITZALPEAN

Larramendi Euskal Herritik kanpo hasi zen lanean, «euskararen kontra etengabe entzuten zituen txantxa eta burlek zapuztuta» (1728: 1; itzul.). Ordurako halako sona bat ba omen zuen Salamancan hizlari bikain, zuhur eta jakintsu bezala, eta euskarari buruzko liburuek, gaztelania eder batean idatziak, euskalarietan aurrena bihurtu zuten: apologia (*De la antigüedad y universalidad del bascuence en España* [Euskararen Espainiako antzinatasun eta unibertsaltasunaz], 1728), gramatika (*El imposible vencido: arte de la lengua bascongada* [Ezina egina: euskararen artea (edo gramatika)], 1729) eta hiztegia (*Diccionario trilingüe del castellano, bascuence y latín* [Gaztelaniaren, euskararen eta latinaren hiztegi hirukoitza], 1745).

Larramendi «euskaldunen maisua, geure itzkuntza maitearen edertzalle mirarizkoa» zen Arakistainentzat (1747), «maixu guzizkoa» Gandararentzat (1763), eta berdintsu gainerakoentzat ere, Kardaberatzengandik hasi (1761, *EBO* 29-30) eta Txomin Agirrerengan buka (*A. Larramendiren bizitzaren berri labur bat,* 1890). Izan ere, maila batean aritu ziren guztiek Larramendiren lanak izan zituzten oinarri, bultzagarri eta lanabes, eta esateko moduan ez dago hiztegi edo gramatikarik harenetatik abiatzen ez denik (§§7.2 eta 7.3).

Euskara hiztunen begietan balioetsi, oinarrizko hizkuntz lanabesez hornitu eta tradizio eta helburu konpartituak finkatu: horra hor Larramendiren ekarpen handienak, nire ustez. Gaurko hitzetan esanda, berriz, Larramendik euskara normaltzeko oinarriak ipini zituen.

### 3.1. Euskararen gramatizazioa

Aro Modernoan zehar (1492-1789) Europako hizkuntza batzuek lekua kendu zioten latinari gero eta erregistro formal gehiagotan, estatu modernoak eraikitzearekin bateratsu, eta maiz honexen ondorioz. Haien azpiko suertatu ziren mintzoen kaltetan ere altxatu ziren, jakina: ingelesak galesera azpiratu zuen, espainolak katalana, frantsesak okzitaniera, alemanak txekiera, polonierak ruteniera, danierak norvegiera, eta abar. Estatu hizkuntzen goratze honek herrialdeotan diglosia sortu zuen, noski, baina aldi berean adibide izan zen estatu gabeko anitz hizkuntzaren (galesera, esloveniera, letoniera, bretainiera, frisiera, sorabiera…) gramatizazioa abia zedin.

Gramatizazioa Europan tradizio greko-latindarrean oinarrituta Errenazimendutik hasita bertako (eta bestetako) hizkuntzak gramatika eta hiztegiaren bitartez deskribatzeko eta haien irakaskuntza errazteko mugimendu handiari deritza (Auroux 1994). Mugimendu honen barruan euskarak lehendabiziko urratsak Euskara Arkaikotik eman bazituen ere (5. kap., § 2), baliabide metalinguistiko nagusi bi horiek batek baino gehiagok prestatu bai, baina ez zen ia ezer ere argitaratu (6. kap., § § 5.3 eta 5.4).

Euskarari ere bere aldia heldu zitzaion Larramendirekin, erakundeek zapuztu zituzten Bidegarairen (1676) eta Etxeberri Sarakoaren (1712) saioen ondoren (6. kap., § 5.5). Berak bi bultzagarri izan zituen «azterketa hain korapilatsuan» jarduteko (Larramendi 1729: xvi; itzul.). Alde batetik, euskara «goratzea eta ilustratzea [hots, lantzea], eta alde honetatik sorterriari ospe ematea» (*ibid.*), zeren uste osoa baitzuen besterik izango zela arteak eta zientziak euskaraz garatuko balira (ik. «El bascuence es lengua viva y erudita» [Euskara hizkuntza bizi eta jakintsua da] atala, 1745: xxxiii). Bestetik, «handiago eta nire izaerari gehiago dagokiona, eta da Euskal Herri osoari etortzea espero dudan onura eta etekina (…); metodo eta arau finkoak ematen dituen gramatika egonik, eta gero hiztegia (…), predikariek, misiolariek, apaiz jaunek eta arimen onaz arduratzen diren gainerakoek beren egitekoak bete ahalko dituzte» (*ibid.*). Honetan bai Gipuzkoako Aldundiaren (§ 3.3.9), bai Caracasko Gipuzkoar Konpainiaren inguruko handiki zenbaiten babesa (F. Altuna, a.e.) lortu zuen. Zaila da jakiten zehatz-mehatz zergatik, baina egiantzekoa da eliteko batzuk bera bezain arduratuta egotea elizgizonek zerabilten euskara mordoiloaz —Espainian predikarien hizkuntzaz zebilen kezkarekin bat (Herrero 1968)— eta oro har euskarazko pastoralgintzan sumatzen zen utzikeriaz (§ 2.2).

Euskal Herrian eta kanpoan bere lanek izan zuten oihartzuna gorabehera, euskaldun ikasi gehienek bere hartan jarraitu zuten, erdaraz ikasten, erdaraz irakurtzen eta erdaraz idazten. Iztuetak Ulibarriri honela ziotson (1827-10-01eko gutuna; Ulib 65): «Badakit nik esaten dutena, eta esango ere dutena, txori buru uanditu zenbatek, euskaran ta euskaldunen gauzetan nekatzea, astokeria dala». Bere ekimenari lotu zitzaizkion apurretan gehienek ere, beren aldetik, *arimen onari* lehentasuna eman zioten hizkuntzaren goratze eta ilustratzearen aurretik, irakurleen prestakuntza urria kontuan harturik (§ 3.3.5), Kardaberatzek azaldu bezala:

> Itzketaren batzuek [i.e. maileguak] orrela artzeak esan nai eztu euskerak berariazko itz garbi ta berezkoak gauzentzat ez dituela. Ondo dakienarentzat baditu. Esan nai dedana da, orañ iñori euskeraz erakustera ez noala, ezpada animai nolerebait laguntzera, eta oriek salbatzeko bearren diran gauzak ondo adierazotzera (Cb *Eg* I, 1761: 29).

Dena dela, are idatzi xumeenetan ere nabaria da idazle larramenditarrek izan ohi duten txukuntasunerako jaidura, Hegoaldeko idazle zaharretatik garbi bereizten dituena.

Ikusi besterik ez dago Irazustaren dotrinaren eta Burgoskoaren artean dauden aldeak —lexikoak eta sintaktikoak batik bat—, zortzi urteren gorabeheran:

> Da gauza bat esan eta pensatu alditequean excelenteena eta admirableena; Jaun bat infinitamente poderosoa, sabioa, justoa, principioa eta fiña gauza guztiena (Iraz, 1739).

> Da esan al ta gogora al ditequean gauzaric garaien ta miragarriena, Jaun bat finicgabero ona, aal guciaren jabea, jaquintsua, justua ta gauza gucien asiera ta bucaera (*CatBurg,* 1747).

### 3.2. Apologia, gramatika eta hiztegia

Apologia ez da euskaldunen joera bitxi bat, luzaz sinistarazi nahi izan zaigunez (cf. Tovar 1980), baizik eta hizkuntza orok —handiek zein txikiek— erabili eta erabiltzen duten baliabidea, kasuan kasuko prestigiodunak bezain ona edo are hobea dela aldarrikatzeko helburuarekin (cf. Burke 2006: 77-82). Beraz, ez da harritzekoa Larramendik bere egitasmoaren aurresku ipini izana (azpititulua *Artearen aurreko frogapena* da), hala erdaldunek nola euskaldunek berek uler zezaten euskara ezertakoa dela: harmoniatsua, gramatikaduna, aberatsa. «Ondo dakit kanpokoekin eta etxekoekin borrokatu behar dudala, jakintsuekin eta ezjakinekin: zeren eta are jende xume zarpailak ere nahi baitu borroka honetan parte hartu» (Larramendi 1728: 1; itzul.). Ezer gutxi balio du, baina, apologia hutsak gramatika eta hiztegia gabe: osatzen duen hirukotea klasiko bat da literatur hizkuntzen hasieran.

Harrigarria da zeinen ondo moldatu ziren Leizarraga bat edo Axular bat gramatika-hiztegirik gabe, zeren gehienok behar-beharrezkoak baititugu zalantzak konpontzeko eta gehiago ikasteko. Honek aski azaltzen du Larramendiren lan horiek izan zuten arrakasta eta eragina. Alabaina, lan duinak ere badira, azterketa neketsu, sakon eta luzeen ondorio.

Gramatikaren izena ere zirikatzaile da eta erreibindikatzaile: *El imposible vencido,* euskaraz geroago *Ezina egina* itzulia. Lehendabizikoa izan arren, «azalpen argi bat da, euskararen egituraren alde garrantzizkoenak agerian jartzen dituena» (Mitxelena 1959: 431; itzul.). Gipuzkera bere euskalkia oinarri hartuta, hiru euskalki nagusiak (§ 7.4.1) islatzen ahalegindu zen. Gramatika honen laguntzaz euskaraz ikasi omen zuten Bernardo Recio josulagunak (1714-1791; Lar 1745: xxxix) eta haren ikaslea aita Palacios frantziskotar predikalari ospetsuak (1727-1804; Mg *CO* 292-294), predikatzeko, aitortzeko eta are idazteko lain ikasi ere.

Gramatikaren izaerari eta batez ere literatur hizkuntzan izan zukeen eraginari jaramon handirik egin ez ez bazaie ere, *Hiztegi Hirukoitza*-z (hemendik aurrera *HH*) asko idatzi da; gehiegi, aukeran, gehientsuena Mokoroa «Ibar»-en (1937) ikuspegi aktualista,

endogamiko eta pasadizozkoa (cf. Lakarra 1985a) berrestera baitator, orduko datuak xeheki aztertu eta orduko testuinguruan kokatu beharrean.

Larramendik gaztelaniaren hiztegirik onena eta handiena hartu zuen eredu: Espainiako Akademiaren *Diccionario de Autoridades* (1726-1739) irten berria. Horrekin zer lortu nahi zuen argi dio, alegia, hiztegi horren maila emanez gero, «…orain edozein zientzia eta ikasketatan erabilia izateko aukeran dago euskara» (1745: xlviii; itzul.); hots, *Hirukoitza* Zgusta-k (1989) «standard-creating dictionary» izena eman zion hiztegi motakoa dugu, alegia, estandar bat sortzeko asmoz egindakoa.

Irizpide lexikoetan, Bigarren Euskara Modernoko muturreko garbizaletasunarekin (8. kap., § 5.1.2) zerikusi gutxi du, zeren eta elkarrekin biltzen baititu euskalki guztietako hitzak, hitz berriak eta maileguak. Jadanik apologia idatzi zuen garaian buruan zeuzkan irizpideak dira (1728: 117-119), hiztegiaren hitzaurrean (1745: ix-xii eta xliii-lvii) xeheki azalduak, euskal lexikoaren izaerari buruzko eta haren gaurkotzeari buruzko teorietan oinarrituta (Urgell 2004).

Lehenik eta behin, etsita zegoen euskara bezalako ama-hizkuntza baten lexikoa sortzez osoa eta aski den adinakoa zela, baina ahaztuz zihoala hiztunen axolagabekeriagatik, nahiz altxor lexiko hori euskalkietan sakabanatuta gorde, hein batean bederen (1745: xii, lii eta xlv). Hortaz, liburuetatik, hiztegietatik eta are ahozko galdeketetatik ere (§ 7.4.1) ahal bezainbat hitz eta esapide bildu zituen, ziren euskalkikoak zirela, berariaz etorkia markatu gabe, antzina euskaldun guztienak izan zirelakoan, etorkizunean berriro ere guztienak izan zitezen (§ 5.5.1.3). Sarrera batzuetan ederki ikusten da hiru euskalki nagusietako formak batu zituela, gipuzkera, bizkaiera eta nafar-lapurterazkoak hurrenez hurren: «clavo, *iltzea, ultzea, itzea*», «(en ningún) lugar, *iñon ere, iñon bere, nihon ere*», «(es a) saber, conviene a saber, *esan nai det, gura dot, erran nai dut*».

Euskararen antzinako lexiko haren arrastoak onomastikatik eta antzina euskarak —ustez— beste hizkuntzei emandako hitzetatik ere (§ 7.5) berreskuratu zuen. Batetik, adibidez, Gipuzkoako hainbat herri-izen diren-direnean agertzen dira, hitz arruntak bailiran: *abalzizketa* «melodrama», *arrasate* «demolición», *berastegi* «baxada», *getaria* «fumante», *iziar* «tamujo», *lasarte* «lastre», *lezo* «fieltro», etab. (Urgell 2008b). Bestetik, euskal hitz petoak bailiran aurkeztuak dira hamaika mailegu, hala nola *aberia, alabanza, alanbre, alboroto, alegere, arroganzia, arroz, arte* eta *azaña;* esate baterako: «*Arrogancia,* latinak eta erromantzeak euskaratik hartu zuten hitz hau *arró jancia*-tik dator, [hau da,] jantzi harro, puztu, harroputzetik; edo *arro antzia, antzea, antza*-tik, [hau da,] harro eta harroputz antza duenetik, [eus.] *arrogancia, arrotasuna, faca, antustea*» (itzul.).

Lexiko arrunta biltzen egindako lan handi horregatik ere, *hitz fakultatiboak* direlakoak osatu beharra zegoen oraindik, hau da, hizkuntza jasoetan arteak eta zientziak garatu ahala sartzen edo sortzen direnak (1745: xlviii-l). Larramendik garbi zeukan euskarak,

edozein hizkuntzaren zilegitasun berberaz, halako hitzez hornitzekotan aukeran duela maileguak hartzea edo bere erroetatik eratortzea. Haren ustez, onena erdibideari heltzea da: «Ez ingelesek bezainbeste, zeren hori baita norbere hizkuntza ezer gutxi estimatzea eta berezko hitzak ahazteko bidea zabaltzea; ezta frantsesek bezain gutxi, zeren hori baita adimena lotuta edukitzea» (1754: 294; itzul.).

Dena dela, *HH*-ean ez zaie mailegu berriei harrera handirik egiten: aitzitik, gehienak (% 78) lehenago lekukotuak dira edota euskal etimologiadunak. Gainera, ez dugu ia inoiz Urteren hiztegiko (1715) *adorable, afrikano* eta *animoso* mailegu eratorri zuzenak bezalakorik, *adoragarri, afrikar* eta *animotsu* euskal erator baliabideez eratutakoak baizik.

Hiru mailegu mota bereizi zituen: batetik, gaur *erdarakadak* deritzegunak, erdaldunduek bakarrik zerabiltzatenak; bestetik, *behargabekoak,* ordain jatorrak izan arren ohikoak ere badirenak; eta azkenik, *beharrezkoak,* edozein hizkuntzak daukan eskubide berberaz euskarak zer berriak izendatzeko bere egin dituenak edo egingo dituenak (1745: xlvii). Erdarakadak hiztegitik kanpo utzi zituen, jakina, baina mailegu *behargabekoak* ez zituen bat-batean euskaratik erauzi nahi: «Lajatuko ditugu erbesteko hitz horiek, nai badegu, gure euskerarenak piskabana usatuaz ta erabiliaz eskukoi ta jakinak egingo diradenean» (1747: 279).

Mailegu *beharrezkoez* den bezainbatean, erdaratik hartutako kultismoak baino hitz berriak nahiago izan zituen, hitzaurrean azaldu bezala: «hizkuntza hain harmoniatsu eta ederra izanik, eta aukera dugularik, aberastu nahi dut, ez hitz arrotzez, bere hitzez baizik, eta egin beharko dudan lanaren handiak ez nau atzeratuko» (1745: xlviii; itzul.).[13] Esan eta egin. *HH*-eko hitzen % 80 inguru lehen lekukotasunak dira, hots, 32.000 bat (§ 7.3); hauen artean ahozkoak daude (ziurtasunez, % 14tik gora), noski, baina gehienak eratorriak (% 50) eta elkartuak (% 22) dira, oro edo haboroak berak sortuak direlako seinale ezin argiagoa. Beraz, *gaitasunaren hiztegia* da (Lakarra 1995b: 43-47), hots, euskararen *berezko aberastasuna* edo, gaurko hitzetan, hiztegigilearen hizkuntz gaitasuna garatuaz osatutakoa (§ 7.1.2).

Hala bada, kultur hitzetan maizenik hitz berria [N] aurkituko dugu, bera bakarrik edo maileguaz [M] lagundurik; batzuetan, ahal zenean, euskal hitz arrunta [A]; eta bakan batzuetan mailegua soilik, zoriz hautatu ditugun sarrerotan ikus daitekeen bezala:

> Abecedario, *abecedarioa* [M]. Astrología, *izarjaquindea* [N]. Azufaifa, *azufaifea* [M], *quereisanza* [N]. Cartulina, *bordacartoya* [N]. Devoción, *jaiera* [N], *debozioa* [M]. Expedito, *bicia* [A], *lasterra* [A]. Primor, *erederra* [N], *manetasuna* [N]. Sincategoremático, *bereztizkidea* [N]. Vivíparo, *bicerdilea* [N].

13. Irakur bedi oro har «De las voces facultativas, y de la licencia que me tomo en la formación de algunos vocablos [Kultur hitzez, eta hitz zenbait eratzeko hartu dudan bideaz]» atala (1745: xlviii-l).

Eguneroko hitzetan, aldiz, hiru neologismo baino ez daude, bere esanetan: «Hiru hitz baino ez ditut asmatu, hirurak aspaldi darabiltzadanak: *sutumpa* 'artilleria kanoia', *godaria* 'txokolatea' eta *surrautsa* 'tabako hautsa» (1745: xlvii; itzul.). Esan hau barre-algaraka hartu dute Mokoroaren ikasleek, ez baitute jakin Larramendik eguneroko hitzen eta kultur hitzen artean egin zuen bereizketa fina aintzat hartzen, ezta mailegu errotuen, berrien eta litezkeenen artekoa ere, ziurrenik euskal lexikoa euskal hitz guztiez gehi gaztelaniaren edozein garaitako hitz guztiez osatua dela uste dutenetakoak direlako —Mitxelena parafraseatzea zilegi bazait—. Ikuspegi historiko landuxeago bat dugunontzat, ordea, agian ausarkeria litzateke bere garaiko euskaran bizi ziren eta bizi ez ziren maileguen gaineko *HH*-aren lekukotasun inplizitua alde batera uztea, lexikoaren historiaz dugun datu-gabezia ezaguna dela eta.

Larramendik bazekien hitz berriak ohiko bihurtzea ez zela erraza izango, erdaraz eskolatutakoek euskara lantzea onartuz gero ere kultismoak (mailegu jasoak) erabiltzeko izango zuten jaiduraren aurka egin beharko baitzen: «Esango dute hitzok ez direla ulertzen. Lehenik, ez dira herri xehearentzat, fakultatiboak baizik, eta aski da zientzietako irakasleek ulertzea, hitz grekoekin gertatzen den bezalaxe. Bigarrenik, gutxi axola du hasieran ulertzen ez badira, zeren eta denborarekin eta errepikatzearekin erraz ulertuko baitira. Hirugarrenik, are herri xehearentzat ere ulergarriagoak dira *Jaincoquindea, Izarquindea, Ceruquindea, eraquindea* euskal hitzak*, Theologia, Astrologia, Uranologia, Chronologia* baino*,* zeren hauei ez baitie ezertan ere euskal itxurarik hartuko, eta haiei bai» (1745: xlix; itzul.). Hitz bertsuak erabili zituen euskalkietako hitzak orokortzearen alde Mendibururi idatzi zionean: «Ongi egin dezu Nafarroako hitzen batzuek ekartzea, egokiak diranean eta besterik eztanean: zerren lenbizian ta bat-batetan aditzen ezpadira, aurki adituko dira» (1747: 279-280).

Larramendik ez zituen behin ere hitzak sortzeko erabili zituen arauak esplizitatu, ez gramatikan (1729: 268), ezta hiztegian ere: inplizituki bakarrik aurki daitezke, proposatzen dituen esanahikide ugarietan. Haren xedea ez baitzen eredu lexiko finko bat ezartzea, euskararen formazko aberastasuna erakustea baizik (§ 7.1.2)[14].

Bildutako hitzak analizatzerakoan aurkitu zituen osagaiak (erroak eta atzizkiak) modu berrietan bilduz eta elkarbide arauak analogiaz aplikatuz sortu zituen hitz berriak. Beste hariko ezpala da osagai eta arauok zuzen asmatu zituenentz. Izan ere, elkartu arruntak asko eta asko badaude ere (*abisu-ontzi* «(navío de) aviso», *aidemaila* «grado(s) de parentesco», *apaizgela* «pastophorio», etc.), haren hitz berriak ez dira beti orain jakintzat ematen ditugun arauen araberakoak. Esaterako, *arrautsi bedar* «salsafrás, salsifrás, yerva» (*harri* + *hautsi*) *harpe* (*arbe* 1032) bezalakoen eredura egina da (*harri* +

14. Ondoren azaltzen direnen xehetasun gehiagotarako, ik. Urgell (2000a eta 2003).

*pe*) eta *arakaro* «encarnadura» (*haragi* + *aro*) *harakin* (1301) bezalakoen eredura (*haragi* + *-gin*). Ostera, *akirin* «cabrón castrado» (*aker* + *irindu*) bezalakoak *clipping*-az osatuak dirudite, hau da, osagaiak era batera edo bestera laburtuz (i.e., *ak(er)irin(du)*); baina laburtze horretan legeak edo joerak behinik behin bilatuz gero, sistema konplexu batekin egiten dugu topo, dirudienez hala eufoniari (***akeririn*-eko dardarkari bakunen pilaketa saihestu nahia), nola morfologia ulertzeko izan zuen erari (*irin* aditzoina hobetsi izana partizipioaren gainetik; gai honetaz ik. Urgell 2016) begira egindakoa baita.

Are nekezago azal ditzakegu elkargunetik kanpoko hots aldaketak, hala nola *aderna* «pitón, cuerno que empieza a salir» (*adar* + *erne*) edo *arlatx* «vinagre» (*ardo* + *latz*), elkartuaren amaierako *e* > *a* eta *tz* > *tx* hots-aldaketa ezezagunekin. *HH*-aren beste berezitasun bat hitz polisintetikoak dira, hots, atzizkia oinarri elkartu bati eransten zaionekoak: *aldizenda* «metonymia» ([*alda(tu)* + *izen*] + *-da* atzizkia, gure *-tze*-ren kidekoa) edo *abiurki* «torzal» ([*hari* + *bihur(tu)*] + *-ki*).

Adibideon aurrean, ezinbestean ondorioztatu behar dugu ezen *HH*-ko hitz berriak, baita ilunenak ere, berariaz *egokiak* direla edo, gaurko hitzetan, *kratilikoak,* hau da, adieraziaren eta adierazlearen arteko lotura naturala islatu nahiz eginak (§7.1.2), antzinako euskal hitzak omen ziren bezalakoxeak: «Zilegi da [hitzak eratzea], dudarik gabe, eta are ezinbestekoa ere, hitzak eratzerakoan Platonek *Kratilos* izeneko solasaldian agindu zuen egokitasuna gordez gero, euskararen eitea eta izaera eta hitz bakunen esanahi egokia aintzat harturik» (1745: xlix; itzul.; §7.1.2). Lotura hori zein den, baina, maiz ez da asmatzen erraza; gaitzerdi, batzuetan *Autoridades*-ek laguntzen digu: *arrautsi bedar*-en osagaiak bertako azalpenetik hartuak dira (s.v. *saxifraga:* «se les dio este nombre (…) por la virtud que tienen de deshacer y quebrantar [*hautsi*] la piedra [*harri*] que suele formarse en los riñones»), *arlatx*-enak bertako etimologiatik («Es compuesto de las dos voces, Vino [*ardo*] y Agrio [*latx* < *latz*]») eta *arakaro*-renak latinezko ordainetik (lat. *carnis* [haragi] *temperies* [aro]).

Eratorrietan *HH*-k lehenagoko hitz bilduma guztiak gainditzen ditu, bai atzizki kopuruan, bai haien etorkian, bai haien emankortasunean ere. Hain da horrela ezen esan liteke euskal eratorbidearen historia behin betiko aldatu zuela, bere ulerkerek maiz gerokoak baldintzatu baitituzte. Orotara 72 atzizki kausitu dira orain artean, zaharretan ugariena dirudien Urteren hiztegiko 52en aldean (1715). Aberastasun hau idatzizko eta ahozko askotariko iturrietatik dator, eta haren ondorioz ordura arte Iparraldeko tradizioan bakarrik ezagun ziren atzizkiak (*-go* eta *-pen*), testu zaharretan bakanak (*-era* eta *-keta*) eta apika onomastikan fosilduta baino ez zirenak (*-aga*) hizkuntza jasoan hedatu ziren. *HH*-aren iturrien azterketak erakutsi digu, esaterako, idazle larramenditarrak bereizi ohi dituen *-kiro* atzizkia (*ederkiro* 'ederki', etab.) Beriain nafarraren testuetan ikasbide zuela Larramendik.

Tradizioari orpoz orpo jarraitzen dioten eratorri anitzez gainera, hainbat berrikuntza agertzen dira, *HH*-eko hitzak bereizteko modukoak:

- Atzizki berriak, hala nola *jakinde*-tik erauzitako *-kinde* (*izarkindea* 'astrologia', *artizkindea* 'ortografia', etab.; ik. azalpena: 1745: xlviii-xlix) edo gazt. *con-* kalkatzeko baliatu zuen *-kida* (*ustakida* 'konfiantza', *ustakidatu* 'konfiatu'), *-kide*-ren egokitzapena (ik. 1745: l).
    - Alomorfo ezezagunak, hala nola *-de, -te*-ren ustezko aldaera (baina cf. *igande, mende,* etab.), ozen ondoan erruz erabilia: *abrilde* 'immolazioa', *aginde* 'agindua'…
    - Ohiz bestela erabilitako alomorfoak, hala nola *-kai -gai*-ren ordez (*aldakai* 'aldagarria') edo *-kin -gin*-en ordez (*arropakin* 'arropagilea').
    - Bigarren mailako aldaeren erabilera askea: adib., *aurrilte* «infanticidio» vs. *aitaren iltzea* «parricidio» (*-te* vs. *-tze*) edo *arbotale* «catapulta» (< *arri* + *bota*) vs. *botatzaile* «echador» (*-le* vs. *-tzaile*).
    - Atzizki-kateak ugari: *adiskidegarriro* 'adiskidetsuki' (*-kide* + *-garri* + *-ro*), *aitorgotegi* 'aitorlekua' (*-go* + *-tegi*), *anizkidargo* 'komunitatea' (*-kida* + *-ar* + *-go*)…
    - Askatasun handia oinarrietan: adibidez, *-ki* zein *-kiro,* tradizioz betiere izenondoari atxikiak, usu izenaren (*arauki* 'doiki', *animokiro* 'alaiki') zein aditzoinaren ostean (*auteski* 'bikain', *agerkiro* 'nabarmenki') agertzen dira.
    - Esanahi hedadura: adib., tresnak eta baliabideak izendatzeko eskuarki 'egilea' adierazten duten *-le* eta *-ari* atzizkiak baliatu zituen (*arbotale* 'katapulta', *arbotari* 'zutoin-arkua'), eta erdal erlazio-izenondoak *-tar, -tsu* zein *-dun* atzizkien bidez itzuli zituen (*aberetar* «brutal», *aitatsu* «paternal», *arretadun* «reflexivo»), usu haien ohiko adieratik at.
    - Ohiz kanpoko hots-aldaketak, hala nola *atxalketa* «uñeta» (< *atzal* 'azkazala'), gorago aipatutako *arlatx* (< *latz*) adibidearen antzera.

Sarrera gehienetan ordain bat baino gehiago eskaini zuen Larramendik, ez gutxitan bururatu zitzaizkion konbinazio guztiak, dela oinarri ezberdinei atzizki bera erantsiz («alfaharero, *loiguillea, buztinguillea, eltzeguillea, topinaguillea*»), dela oinarri berari balio bereko edo bertsuko atzizkiak-edo ezarriz («mañoso, *mañatsua, mañaduna, mañatia*», «vestuario, donde se viste, *janciechea, jancilecua, jazteguia*»).

### 3.3. Lapurtera klasikoaren tradizioa

Hegoaldean bakana zatekeen lapurtera klasikoaren ezagutza, ezagutzarik bazen, menturaz Iruñeko elizbarrutian izan ezik[15]. Larramendik Salamancan ezagutu zituen Etxeberri Ziburukoaren eta Haranbururen liburuak (1729: 374-379; 1745: xxxv). Gero Baionako

15. Lehenago «Nafarroan» esango nuen, baina Koldo Ulibarrik (a.e.) bildutako grafiazko datuen arabera, ikuspegia zabaldu behar dugu.

egotaldian (1730-1733) hainbat gehiago eskuratu zituen (1745: xxxiv-xxxvi) eta atera ahala jasotzen jarraitu zuen hil artean (1754: 295-297; Altuna 1984; Urgell 2005a).

Lapurterazko liburuetan aurrena Axularren *Geroko gero* jarri zuen (*Gero*-ren bigarren edizioa, LEMkoek ezagutu bide zuten bakarra) —Etxeberri Sarakoak bezala eta agian honen eraginez ere (cf. 6. kap. § 5.3)—: «Askoren eskuetan dago, eta euskaldun guztien eskuetan egon behar luke» (1745: xxxv; itzul.); areago, haren ustez, bere burua euskaldun ontzat duen orok irakurri behar luke, eta irakurri ez eze, ulertu (*ib.* xlvii). Esan hauek ondoren garbiak izan zituzten berehalakoan. 1758an Joakin Altuna zaldun gipuzkoarrak —Erret Ogasunaren goimailako funtzionario— bazuen *Geroko gero* bere liburutegian Madrilen, Larramendiren hiztegiaz eta apologiaz gainera (Barrio 2011). Data bertsuetan esku ezezagun batek hainbat hitz eta adizki glosatu zituen goinafarreraz «liburu baliotsu hau (…) nafarrek hobeki uler dezaten» (Los Arcos 1974; itzul.). Zarauzko komentuan beste ale bat aurkitzen dugu orduantxe, «A. Palaciosen erabilerarako» (Villasante 1961: 30-31; itzul.; § 3.2), hain zuzen Añibarrok bizkaierazko itzulpena egiteko erabili zuen bera: izan ere, honexen ustez «Arte honekin [bere gramatika], hiztegiarekin eta Axularrekin bazukeen edonork euskaldun bikain bihurtzeko behar duen guztia» (Añ *GB* 14; itzul.). Lizarraga Elkanokoak ere Axular irakurtzen zuen (Apezetxea 1978: 266). Miresmenak bere hartan iraun zuen LEMaren bukaeratik aurrera ere: Sorrarainek (1891, *Catálogo* 107 zb.) zioen lehen euskal obra klasikotzat hartua zela; 1896tik aurrera *Euskal-Erria* aldizkariak Hegoaldeko lehen argitalpena egin zuen, atalka, eta 1909an *Euskal Esnalea*-n gipuzkerazko itzulpena ateratzen hasi zen (Urgell 1991). Esan daiteke, bada, Axularren nagusigoa —Iparraldean lehenagotik zeukakeenaz goiti— LEMan ezarri zela Larramendiri eta larramenditarrei esker.

Axular ez ezik, lapurterazko liburuak oro har eredu edo inspirazio gisa erabili zituzten idazle berriek. Etxeberri Ziburukoaren eragina sumatu da Mendibururengan (P. Altuna 1982: lxix) eta Ubillosek gutxienez Axular, Etxeberri eta Lavieuxvilleren dotrina ezagutu zituen (Urgell 1991: 925). Mogelek dotrina hori bizkaieraz egokitu zuen (Villasante 1987) eta Iztuetak Oihenarten atsotitz eta poesietatik jasotako hitzak bildu zituen bere hiztegian (Urkizu 1996). Arakistainek Etxeberri Ziburukoaren *Noelak* (c. 1631), Gasteluzarren *Egia Katholikak* (1686) eta Etxeberri Sarakoaren *Gomendiozko karta* (1718) hustu zituen hiztegia osatze aldera Larramendiri bidali zion hitz zerrendan (1747).

Honek ondorio garbiak izan zituen. Batetik, Hegoaldeko literatur hizkuntzaren bilakaerari dagokionez, grafi arazo zenbait lapurtera klasikoaren laguntzaz konponduko dira (§ 5.1), grafia etimologikoa heredatu (§ 5.1.2) eta bertako hitzak ez-arian lexiko jasoan sartuko dira (§ 5.5.1.3). Bestetik, idazle zaharrak ez ezik, garaikideak ere ezagutzeko jaidura izan zuten larramenditar jantzienek: adibidez, Larregiren *Testamen çaharreco eta berrico historioa* (1775-1777) Zabalak aipatu zuen *Verbo regular bascongado*-n (1848)

eta Lardizabalek *Kondaira*-n (1855) iturri gisa erabili zuen. Zabala berak, *Noticia de las obras bascongadas que han salido a luz después de las que cuenta el P. Larramendi* lanean (1856) Iparraldeko hamabi liburu erantsi zizkien Larramendik *HH*-aren hitzaurrean aipatutakoei (1745; Villasante 1979: § 268).

Harreman hauek ez ziren norabide bakarrekoak izan, gero ikusiko dugunez. Nolanahi ere, tradizioa konpartitzeak ere lagundu bide zuen euskaltzaleen arteko harremanak gara zitezen. XIX. mendean harreman zuzenak, gutun bidezkoak gehienbat, ohikoak egin ziren: gogora ditzagun Ulibarri, Zabala, Lécluse eta Iztueta artekoak (Ulibarriren *Gutunliburua*-n bilduak; Akesolo 1975), Iztueta eta Abadia zein Erro eta Duvoisin artekoak eta batez ere Bonaparteren inguruko harreman sarea (Duvoisin, Arrese-Beitia, Abadia, Joanategi, Salaberri, Manterola, Campion, Jose Ignazio Arana…).

### 3.4. Larramendiren itzala Iparraldean

Luzaroan sinistu nahi izan da Iparraldeko literaturak ia ez zituela Larramendiren proposamenak aintzat hartu, herri-hizkuntzatik sekula aldendu ez delako aurreiritziagatik (Mokoroa 1936an xedatua). Hala ere, azkenotan etengabe hazi da *Hirukoitz*-eko hitz berriak dituzten testuen zerrenda: *Birjinia* eleberria (1783-1784), Egiategiren *Filosofo huskaldunaren ekheia* (1785), *Testament Berria* (1828), Duvoisinen *Telemake* (1829; Kruzeta 1997), Harriet eta Dassanceren *Testament Berria* (1855) eta Intxauspek Axularren *Geroko gero*-aren edizioari egin zion hitzaurrea (1864). Hauetako asko argitaragabe izateak azal lezake, aldez behintzat, ustearen okerra (§ 3.3.1). Dena dela, gutxietsi da Duvoisin bezalako goimailako idazle batek Kardaberatzen *Ejerzizioen* egokitzapena egin izana (*Liburu ederra,* 1856) eta, gero ikusiko dugunez (§ 5.5.2.1), lexikoan bertan ere ez da behar bezala aztertu Larramendiren eragina. Beraz, bada garaia baieztatzeko Hegoaldean bezalatsukoa izan zela Iparraldean, *à la page* zeudenen artean. Bertatik bertara heldu zen, gainera, berriki agertu den *Kadet eta Bettiriño* eskuizkribuak (c. 1750; Padilla 2011) agerian jarri duenez.

## 4. LEKUKOTASUNAK

Oparoa dugu LEM, aurreko lekukotasun guztien kopurua erraz gainditzen duena. Garaia aurrerago eta lekukotasunak ugariago dira. Oparoagoa zatekeen baldin eta garai goxoagoa izan balitz: lan asko argitaragabe geratu ziren, eta galdu direnak ere ez dira gutxi.

Nabarmentzekoa da askotariko hizkerak jaso izana ere. Larramendiren ekimenak halako indar bateratzaile bat izan arren, literatur hizkuntzaren hainbat ezaugarritan islatua (§ 4), lau literatur euskalki lantzeaz gainera tokian tokiko aldaki asko idatziz jaso ziren, ez gutxitan lehen aldiz (§ 7).

Eliz esparrukoak dira obra gehienak oraino, baina denboraz alegiak, poesia, solasak, narratiba, antzerkia, saiakera, historia eta kazetaritza ere landuko dira. Halaber, ordukoak dira ahozko tradizioa idatziz jasotzeko lehen ahalegin sistematikoak, eta literatura herrikoiaren lehen lekukotasun gehienak (bertsopaperak, pastoralak, etab.).

Aurkezpena erraztearren, Hegoaldeko lekukotasunak hiru azpigaraitan banatu dira, *Hastapenak* (1745-1783), *Finkatzea* (1783-1840) eta *Erpina* (1840tik aurrera), eta Iparraldekoak bitan, *Gainbehera* (1836 arte) eta *Berpiztea* (1836tik aurrera). Idazle eta lan guztien kontu ezin eman, eta irakurleak badu Villasanteren lan klasikora (1979) jotzea, eta Aldekoa (2004) zein Urkizu (2000)-ra ikuspegi gaurkoago baterako.

### 4.1. Lekukotasun zuzenak

#### *4.1.1. Hego Euskal Herriko lekukotasunak*

##### 4.1.1.1. Hastapenak (1745-1783)

1728-1744 arteko argitaratu urriek ez dirudi Larramendirekin erlaziorik dutenik. Beraz, esan ohi da literatura larramenditarra 1747an hasi zela, urte hartan Sebastian Mendibururen bi liburu argitaratu zirelako: *Jesusen bihotzaren debozioa* eta Larramendik zuzendutako Burgosko dotrina, nahiz agian lehena kardaberatzen *Cristavaren vicitza* izan, ez baita ongi ezagutzen.

Larramendik berak (1690-1766) ez zuen asko idatzi euskaraz: sermoiren, gutunen, otoitzen, poesien eta liburuetan tartekatu zituen pasarteren batzuk. Dena den, idatzi zuena bikaina da, bere mendean parekorik ez duena, adituek diotenaren arabera poesian izan ezik. Bilduma osoa Altunak eta Lakarrak argitaratu dute (1990).

Agustin Kardaberatz (1703-1770) eta Sebastian Mendiburu (1708-1782) josulagunek hogei urteren bueltan artean inon inoiz baino orrialde gehiago argitaratu zuten euskaraz: Hegoaldeko liburu haziena den Otxoa Arinen dotrinak (1713) 175 orrialde ditu (in-8), Kardaberatzen *Ejerzizioen* lehen liburukiak berak bakarrik 347 (in-8) dituen bitartean.

Kardaberatzen bizitzan argitaratu gehienak 1760-1766 bitartean pilatzen dira; gipuzkeraz, besteren artean, *Cristavaren vicitza* (1744?), Asteteren itzulpena (1760), *Eusqueraren berri onac, eta ondo escribitceco, ondo iracurtceco eta ondo itzeguiteco erreglac* (1761), *Aita San Ignacio Loyolacoaren Egercicioac* (4 lib.; 1761-1762) eta *Jesus, Maria ta Joseren devocioa* (1763?); haietako pare bat bizkaieraz moldatuta argitaratu zituen: Astetea (1762) eta *Jesus, Maria ta Joseren devociñoco librochoric atararico devociño batzuc* (1763). Hil ondoren beste batzuk haren izenean argitaratu eta batzuetan maneatu ziren: orduan ospetsuena, *Escu liburua… Cardaberaz jesuitaren obretatic aterea* (1826). Guztien faksimileak bildu zituen *La Gran Enciclopedia Vasca*-k (1974), ez beti lehen edizioan. Geroztik, berari egotzi zaion *Cortesia* eskuizkribua ere argitaratu da (P. Altuna 1992).

Mendiburuk, obra txikiagoekin batera, Burgosko dotrinaz gain (1747; Lakarra 1986c), *Jesusen bihotzaren devocioa* (1747, 1751ko bigarrenean nafartu omen zuena), *Jesusen bihotzaren congregacioco reglac* (1747), *Jesusen amore-nequeei dagozten cembait otoitz-gai* (1759-1760) eta *Euscaldun onaren viciera* (1762) argitaratu zituen. Argitaragabeak P. Altunak bildu ditu (1982).

Lanok eten egin ziren josulagunak Espainiatik atzerriratuak izan zirenean (1767), Larramendi hil eta hurrengo urtean hain zuzen, eta oro har baliteke honek zenbait galera sortu izana, geroztik han-hemen tarteka agertu diren hiruren argitaragabeak lekuko.

Zarauzko misiolariek ahozko predikazioaren euskarri zerabiltzaten idatziak, batzuk behintzat gorde dira; adibidez, Franzisko Antonio Palacios (1727-1804) eta Juan Ignazio Astigarragarenak (1783-1854). Bion eta beste askoren sermoiak zerrendatu dira frantziskotarren artxiboetako katalogoan (Etxebarria 2005), bai eta Astigarragarenak argitaratu ere (Etxebarria & Apraiz 2007). Giro honetakoa bide da *Dotrinazko sermoitegia* aurkitu berria ere (c. 1775), egile ezezagun batek ziurrenik Aiaraldeko bazterren batean kokatzekoa den hizkera galdu batean idatzirikoa (Ulibarri 2015).

Larramendiren entzutea dute orduko idazle apalago batzuek ere, hala nola Sebastian Antonio de la Gandara gernikarra (1700?-1780?; Kaltzakorta 1999), Nikolas Manuel de la Quadra frantziskotar bilbotarra (1713-?; Bilbao 1997, 1998) eta Franzisko Antonio Agirre, Oikiako dotrinaren egilea (1759; Lakarra 1987a). Gainerakoan ezer gutxi gehiago dago: Franzisko Xabier Larizen dotrina gipuzkeraz (1757), Bartolome Olaetxearena bizkaieraz (1763) eta Josef Mikelestorena nafarraren obratxo bat (*Cerura nayduenac ardezaquean vide erraza,* 1749; Bidador 1996), gehi ekialdeko araberaren lekukotasun bakanak: Julian Garzia de Albenizen *Acto contriciocoa…* (1778?; F. Altuna 1995) eta Juan Bautista Gamizen olerkiak (1696-1773; Goikoetxea 1984). Oso estimatuak izan ziren Agustin Basterretxea (1700-1761) josulagunaren *Pasioko bertsoak* (1760 b.l.), gerotxoago gipuzkeraz Kardaberatzek ipini (1760; *Kristabaren bizitza* 365-389) eta berriro norbaitek bizkaierara itzuliak (1832), nahiz jatorrizkoak egun ezezagunak izan.

Elizatik kanpo azkoitiar bi baino ezin aipatu: Adiskideen Elkartearen sortzaile eta lehen buruzagi izan zen Xabier Maria Munibe Peñafloridako kondeak (1723-1785) *Gavon-sariak* (1762), Gabonetan Azkoitian abestu ziren hiru *otsandi* 'kantu', eta *El borracho burlado. Ópera cómica en castellano y bascuence* (1764) antzezlan elebiduna[16] argitaratu zituen —lehenengoa «Luisa de la Misericordia» ezizenaren azpian— eta

16. Badago aipatu ohi ez den hirugarren bat: *El carnaval. Comedia famosa que se representó en la Villa de Azcoitia…* sainete lirikoa, zeinaren bigarren agerraldian *Borracho burlado*-ko zati bat errepikatzen den, nahiz aldaketa gutxi batzuekin omen (Palacios Fernández 1974).

Joakin Alzibar-Jauregi (1746-1810) *Gran tourra* antzezlana, eskuizkribaturik gorde da (1772; Aginagalde *et al.* 2007).

4.1.1.2. Finkatzea (1783-1840)

1783an Kardaberatzen bizkaierazko dotrina bigarrenez argitaratu zen, J.A. Mogelek zuzendua, eta 1798an beste hainbeste egin zuen gipuzkerazkoarekin J.B. Agirrek. Artean biak beren lehen idatziak zirriborratzen ari ziren, baita P.A. Añibarro ere. Giro hau izan liteke, nork daki, Juan Antonio Ubillos (1707-1789) frantziskotarrak bere euskal liburu bakarra, *Christau doctriñ berri-ecarlea* (1785), bizitzako azken urteetan argitaratzeko zioa.

Bestalde, 1790etik aurrera Iparraldeko ehunka elizgizon heldu ziren Hegoaldera Iraultzatik ihesi (§ 2.2.2), artean Duhalde idazlea (§ 5.1.1). Ez dirudi zorakeria denik pentsatzea beren eskarmentua —Iraultzarekin izandako erlazio traumatikoa ez ezik, euskarazko liburuak eskura izateko ohitura ere— erlijio idazle belaunaldi berriaren pizgarrietako bat izan zitekeela, nahiz oraingoz aieru bat besterik ez izan (ik. § 5.1.1). Edonola ere, Frantziako Iraultzaren (1789), bi Frantsesteen (1793-1795 eta 1808-1814), Sekularizazioaren (1836) eta gorabehera politiko handien mendean idatzi izanak baditu ondorioak idatzietan eta hauek izan zuten patuan.

Gipuzkera landu zuten Juan Bautista Agirre «Agirre Asteasukoa» (1742-1823), Jose Ignazio Gerriko (1740-1824), Juan Ignazio Iztueta (1767-1845) eta Jose Kruz Etxeberriak (1773-1853); nafarrera Joakin Lizarragak, «Lizarraga Elkanokoa» (1748-1835); bizkaiera Jose Antonio Mogel (1745-1804), Pedro Antonio Añibarro (1748-1830), Pedro Astarloa (1751-1821), Bartolome Madariaga «fr. Bartolome Santa Teresarena» (1768-1835), Juan Mateo Zabala (1777-1840), Jose Paulo Ulibarri (1775-1847), Juan Jose Mogel (1781-1849) eta Bizenta Mogelek (1782-1854). Gipuzkeraz ere idatzi zuten aldizka J.A. Mogelek, Añibarrok eta B. Mogelek (§ 8.2), eta Añibarrok *Cristau Doctriña* bat nafarreraz (c. 1802).

Idazlan gehienak sermoitegiak eta deboziozko liburuak dira, nahiz dotrinek ere —batzuetan lehen mailako idazleek eginak— ohiko garrantzia izan, euren erabilgarritasunagatik, ezbairik gabe. Idazleek, predikazioaz biziki arduratuta, sermoiak franko prestatu zituzten, dela kideko elizgizonen ahozko jardunaren eredu gisa, dela pulpitutik irakurriak izan zitezen. Idazle ugariak ditugu haietako asko. Usu ediren ditugu egile aldaerak, eta are badugu Zabalaren eskuizkribu bat, *Correcciones al Urteco Domeca,* Astarloaren liburuari egingo lizkiokeen zuzenketak biltzen dituena. Eliz gaietan bederen, une honetan finkatu zen Hegoaldeko literatur hizkuntza.

Orduan argia ikusi zuten sermoitegiak: Mogelen gipuzkerazko *Confesio ta comunioco sacramentuen gañean eracasteac* (1800) eta honen zati baten bizkaierazko bertsioa

(*Confesino ona,* 1803), Agirreren *Confesioco eta comunioco sacramentuen gañean eracusaldiac* (1803), fr. Bartolomeren *Icasiquizunac* (3 lib., 1816-1819) eta Astarloaren *Urteco domeca gustijetaraco verbaldi icasbidecuac* (2 lib., 1816 eta 1818). Beranduago argitaratu ziren Lizarragaren *Urteco igande guztietaraco platicac edo itzaldiac*, Iturriagak zuzendua (1846 [1802]; jatorrizkoa, Ondarra 1990), Agirreren *Eracusaldiac* (3 lib., 1850; 1803-1814 ingurukoak) eta Añibarroren *Curutze santearen, Aita Gure ta Ave Marien ganeco eracusaldiac* (1897). Argitaragabe geratu ziren Mogelen *Cristau eracasle euscalduna,* aurreko gipuzkerazko sermoitegiaren jarraipena (1802 b.l.), Añibarroren *Misionari euskalduna* (c. 1808; honen zati bat da *Curutze santearen…*), Lizarragaren sermoitegi erraldoia, *Urteco*-z beste guztia (1976-1987) eta Zabalaren sermoiak (Villasante 1996 eta 2000), besteren artean. Galdutzat ditugu fr. Bartolomeren bi sermoi liburu (1807). Agirreren zenbait sermoi berreskuratu dira, baina galduak bide dira besteak. Mogelenak ere sakabanatuta daude eta tarteka argitaratu dira.

Bestelako erlijio liburu argitaratu eta argitaragabeetan honakoak izan litezke garrantzizko edo interesgarrienak: Añibarroren *Escu-liburua* (1802; 1821ean goitik behera zuzendu eta berriz argitaratua (ik. Urgell 1985 eta 1986)), *Lora sorta espirituala* (1803; Urgell 1988), *Nequea arinduric* (c. 1808; Urgell 1987) eta Axularren *Geroko gero*-ren bizkaierazko itzulpena (c. 1808; Urgell 2001a), J.J. Mogelen *Baseerritaar nequezaleentzaco escolia* (1816; osoki berriztaturik berriz argitaratua, 1845; Uranga 1987), fr. Bartolomeren *Euscal-errijetaco olgueeta ta dantzeen neurrizco gatz-ozpinduba* (1816; Urkiza & Baraiazarra 2000) eta Etxeberriaren *Jesusen imitacioco edo berari jarraicen eracusten duen libruba* (1829), Kenpisaren Hegoaldeko lehen itzulpena. Galdutzat jotzen dira Añibarroren *S. Ignacioren ejercicioac* eta B. Mogelek ondo hiltzen laguntzeko argitaratu zuen liburua.

Ebanjelioak edo haien kondairak: Añibarroren *Jesu Christoren lau Evangelioac batera alcarturic* (Ciarrusta 1991), Lizarragaren San Juanen itzulpena (Bonaparte 1868) eta Oteiza medikuak George Borrowsentzat itzuli zuen *Evangelioa San Lucasen guissan* (1838).

Dotrinetan, Mogelenek multzo nahasi xamar bat osatzen dute, eskuizkribuak eta izenarekin zein gabe argitaratuak bilduz gero; hona batzuk: *Cristiñau dotriñea bere esplicacino laburragaz* (1802), *Cristinaubaren jaquinvidea* (1805), Kardaberatzena laburtua, eta *Christinauaren eracuspena edo doctrina christiania,* «Elgoibarko dotrina» izenaz ezaguna, Lavieuxvilleren bizkaierazko egokitzapena (c. 1802; Villasante 1987). Agirrerena bide da Gipuzkoako Artziprestazgo Nagusiak aterea (1867, 1869). Horiezaz gain, Añibarroren nafarrerazko *Cristau dotriña* (d.g.; c. 1802) eta Etxeberriaren *Cristau doctrina euscaraz* (1822) aipatu behar, eta tokian tokiko dotrinetan Baztangoa (*CatB* 1826), Laudiokoa (*CatLlo* 1828) eta Luzaidekoa (*CatLuz* 1833).

Bi artzain gutun itzuli ziren: Añibarrok *Arzai-adibideac (…) Francisco Valero Toledoco Arzobispo jaunac bere elestar ta ardiai zucenduac* (c. 1808) eta B. Mogelek Luis de Borbon kardinalaren *Carta pastoral* (1820), bata gipuzkeraz, bestea bizkaieraz.

Giro erlijioso orokorretik ateratzen direnetan aurrenik ipini behar Mogelen *El Doctor Peru Abarca* (c. 1802; 1881), bai eta beraren *Versiones bascongadas de varias arengas y oraciones selectas de los mejores autores latinos* klasiko latindarren gipuzkerazko itzulpena (1802; Villasante 1964), honen bizkaierazko bertsioa —*Peru Abarka*-ren bukaeran argitaratua (1881)— eta *Pascalen gogamenak* (*Ezale* 1899) ere. Bide jaso horretatik aurrera segitu zuen Iztuetak: folklorea lantzen lehena (*Gipuzkoako dantza gogoangarrien kondaira,* 1824) eta berdin historia ere (*Guipuzcoaco probinziaren kondaira,* 1847), poesia egiteaz gain (Garmendia 1978). Bien bitartean kokatu behar alegia bilduma argitaratu (B. Mogel, *Ipui onak,* 1804) zein argitaragabeak (J.A. Mogel, Zabala; Azkue 1907-1909), eta bereziki Cadizko konstituzioak (1812) eragindako testuak, guztiak apaiz gipuzkoarrek eginak (Gómez 2012), eta Ulibarriren *Gutunliburua* (Akesolo 1975).

#### 4.1.1.3. Erpina (1840tik aurrera)

Lehen Karlistadaren amaiera (1840) data egokia da lehentxeagotik eratzen ari zen aldaketa sakon baten hasiera adierazteko: euskaltzaletasuna gizarte zibilera hedatzea (§ 2.2.1). Gipuzkoako aldia da, bai literatur gipuzkeraren umotasunagatik, bai eragileen kopuru eta kalitateagatik. Euskarak lekua irabazten du adierazpen publikoetan (aldizkariak, iragarkiak, lore jokoak, etab.). Lehenagoko idazlanak bilatu eta argitaratzen dira (§ 4.3.7). Askotariko gaiak landu beharra, euskararen erabilera erdi-ofiziala eta literatur hizkuntza moderno bat egin nahia, hiru faktore hauek bide eman zioten hitz larramenditarrak aise eta erruz erabiltzeari, hain non erregistro jasoaren adierazle bihurtu baitziren (§ 5.5.2.1).

Mugimendu honen aurrekari handia Iztueta dugu, Gipuzkoako dantzez eta historiaz egin zuen liburu bana lekuko. Agustin Paskual Iturriaga (1778-1851) pedagogoaren hizkuntz zuzentzaile eta aholkulari ere aritu zen, bien arteko gutunetan ikus daitekeenez (Garmendia 1968). Honenak dira *Diálogos basco-castellanos para las escuelas de primeras letras de Guipúzcoa* (1842), Bonapartek berrargitaratua (1857), eta *Fábulas y otras composiciones en verso bascongado* (1842). Biak ala biak erabili zituen Gipuzkoako Aldundiak aditu gisa euskarari zegokionez. Lagunarte berekoak dira, besteak beste, Luis Astigarraga (1767-1841), hizkuntz eskuliburu arrakastatsu baten egilea (§ 4.5.1), eta Franzisko Ignazio Lardizabal (1806-1855) idazle eta gramatikagilea.

Erlijio literaturan, behin eta berriz argitaratzen diren lehengo debozio liburuez, eta hauen argitalpen zuzendu eta emendatuez, eta hauen antzera egindakoez gain, beste era

bateko irakurgaiak —obra hagiografikoak (Bibliako istorioak eta sainduen bizitzak)— boladan daude eta euskal idazle onenetakoak halakoak itzuli, egokitu edo sortzeari eman zitzaizkion. Genero honetan nabarmendu ziren, Lardizabalez gain, Gregorio Arrue (1811-1890) eta Jose Ignazio Arana (1838-1896) gipuzkoarrak eta Domingo Agirre «Txomin Agirre» bizkaitarra (1864-1920). Lardizabalek *Testamentu zarreco eta berrico condaira* (1855) ondu zuen, Larregi lapurtarraren izen bertsukoa ere baliatuz. Arruek erdaratik euskarara hainbat obra itzuli zituen, artean estimatuena eta irakurriena izan omen zen *Santa Genovevaren bizitza* (1868). Euskaratik euskarara ere itzuli zuen; zehazki literatur gipuzkerara eraman zituen Mendiburu (*JBDev,* 1883), J.J. Mogel (*BasEsc,* 1878) eta J.A. Mogelen liburuak (*PAb,* 1948-1950). Aranaren idazlanetan ezagunena *San Ignacio Loyolacoaren bicitza laburtua* (1872) izan liteke, eta beste ikuspegi batetik interesgarriena *Bai, pecatu da liberalqueriya* (1888). Dakitenen aburuz, Txomin Agirreren *Auñemendiko lorea* eleberri historiko-erromantikoa (1898), «eleberri» izena merezi duen lehen euskal lana dugu. Honek gipuzkeraz ere idazten jakin zuen, orduko aldizkarietan sakabanatuta dauden lan txikiagoetan. Bizkaieraz, bestalde, Andres Iturzaeta (1838-1912) arte ez dago ezer handirik; sermoigile eta dotrinagile apala dugu, ugaria, mende hasierakoen ildokoa: *Urtearen domeca guztiñetaraco berbaldiac* (2 lib.; 1890), *Aita Gaspar Asteteren icasbide cristinaucorraren azalduera laburrac* (1899) eta *Esaldiac* (1900).

Beste taiu batekoak dira, bai asmoz, bai egitez, Bonaparteren mandatuz egin ziren itzulpenak. Hainbat laguntzaile izan zituen: Klaudio Otaegi zegamarra (1836-1890), Bruno Etxenike baztandarra (1820-1893), Pedro Prudenzio Hualde Maio erronkariarra (1823-1879), etab., baina denetan garrantzizkoena Jose Antonio Uriarte (1812-1869) arrigorriagarra, literatur bizkaiera (eta bizkaieraren hainbat aldaki) ez ezik literatur gipuzkera ere lantzeko erabili zuena. Lehendik ere idazle aritua genuen, *Marijaren illa* (1850) eta *Jesus sacramentaduari eta Ama doncella Mariari visitac* (1856) lekuko. Ondotik, Printzeak hamaika lan agindu eta argitaratu zizkion: besteak beste, bizkaieraz Iturriagaren solasak (1857), Mateoren ebanjelioa (1857), Apokalipsia (1857) eta Kantarik Ederrena (1858); gipuzkeraz Mateoren ebanjelioa (1858) eta Apokalipsia (1858). Biblia osoari ere ekin zion gipuzkeraz, baina lehen hiru liburuak baino ez ziren kaleratu (*Biblia edo Testamentu zar eta berria,* 1859). Argitaragabe geratu ziren, orobat, *Bula ineffabilis*-aren eta Asteteren dotrinaren hainbat itzulpen, batzuk H. Knörrek (*BulaAl, BulaV*) eta besteak R. M. Pagolaren lan-taldeak argitaratuak (1992).

Bi hitz baino ez LEMaren eta Bigarren Euskara Modernoaren (aurrerantzean BEM) artean zangalatrauan dagoen azpigarai honen bukaeraz. Mendearen hondar urteetan, Bizkaian nazionalismoa eta, hizkuntzari dagokionez, hiperbizkaiera (8. kap., § 10.3) eratzen ari ziren garaitsuan, literatur gipuzkeraren loraldia dator, guztiz Donostiako giro hiritar, liberal eta euskaltzalean. XIX. mendean zehar Hegoaldeko estandar bihurtu da,

Txomin Agirre bizkaitarrak ere, adibidez, badarabilena. Oso hizkera larramenditarra da, joera garbizale berriek Gipuzkoan erroak landatu arte iraungo duena (8. kap., § 5.1.2). Izen bat ematekotan, Jose Manterola (1849-1884) aipatuko dugu, *Euskal-Erria* aldizkariaren sortzaile eta zuzendari eta Donostiako Lore Jokoen bultzatzaile nagusi, batean zein bestean Pirinioen alde bietako egile garaienak elkarrarazi zituena.

### *4.1.2. Ipar Euskal Herriko lekukotasunak*

#### 4.1.2.1. Gainbehera (1836 arte)

Iparraldeko literaturaren bi garai handiren artean gaude: lapurtera klasikoa eta literatur nafar-lapurtera. xvii. mende erdialdetik (6. kap., § 2) ez zen ia argitaratzen dotrinez, eliz kanta bildumez eta debozio liburu xumeez besterik: irakurle apalei egokitutako literatura baino ez zen; ostera, gai, genero eta hizkuntzan berritzaileenak ziren lanak argitaragabe geratu ziren (§ 4.3.1). Ekialdeko hizkerak lapurtera klasikotik aski ezberdinak lumetara zein are inprentara ere aiseago iristen dira.

Lapurteraz idatzi zuten Joanes Haraneder (1669-?; *Philotea* 1749, *Gudu izpirituala* 1750), Bernard Larregi (1721-?; *Testamen çaharreco eta berrico historioa,* bi lib., 1775 eta 1777; *Kantiko izpiritualak* 1763 ere agian: Laffite 1931: 105), Alexander Mihura (1725-?; *Andredena Mariaren imitacionea,* 1778), André Baratziart (1738-1826; *Guiristinoqui bicitceco eta hiltceco moldea,* 1784), Martin Duhalde (1733-1804; *Meditacioneac gai premiatsuenen gainean*, 1809) eta Jean-Baptiste Kamusarri poeta gazteak (1815-1842; Artola 1988). Zubereraz Martin Maister (?-?; *Jesu-Kristen imitacionia,* 1757) eta Jusef Egiategi (?-?; *Filosofo huskaldunaren ekheia,* 1785). Bi tradizio hauetatik at kokatzekoak dira *Kadet eta Bettiriño* izengabea, Lapurdiko ekialdeko euskararen lekukotasunik zaharrena (c. 1750; Padilla 2011), Hameten gramatikaren ondoren (1741; cf. Urgell prestatzen); *Alphontsa Rodriguez* (1782), Jutsin jaio eta Ibarreko erretore (Oztibarre) izan zen Lopezek egina (Camino 2013b); Garazi ibarreko Bazkazane herriko 1762ko sermoiak (Orpustan 2005) eta bertako 1790eko Konstituzioaren aurkako idazkia (Orpustan 1991). Frantziako Errepublikaren itzulpen politika dela eta sortutako testuak ere bildu dira (Rica 1975; § 2.2.2).

Iparraldeko hiru elizbarrutiek ekin zioten nork bere dotrina ofiziala argitaratu eta berrargitaratzeari. Baionan Lavieuxvilleren dotrina laburra (1731) Iraultza ondoko lehen urteak arte berrargitaratu zen, azken hiruretan Loison apezpikuak 1814an eman aginduaren eraginez, nahiz lehentxeago *Imperadorearen katixima* (d.g., 1807) argitarazi zuen. Akizekoak lehen dotrina ezaguna egin zuen: *Catichima edo fediaren eta guiristino-eguien explicacione laburra,* Suarez d'Aulan apezpikuaren *manuz inprimatia* (c. 1740; Laneufville apezpikuak *arrainprimatia,* 1786 [= *CatLan*]). Joseph de Revol Oloroeko apezpikuarena, Jakes Maitiek egina (1706), *emendatia* hainbat aldiz berrargitaratu zen.

Baionako elizbarrutia Pirinio Apaletako departamendu osora hedatu zenean, guztiak ordezkatu zituen Astros apezpikuak eragindakoak (*Catichima edo fedea laburzki,* c. 1824), laster zubererara ere itzulita (*Catichima edo Fedia laburki,* c. 1834?).

#### 4.1.2.2. Berpiztea (1836tik aurrera)

Halako batean, grafia berriztu zen (§ 5.1.3) eta berriro ere gramatika zein hiztegigintza landu (§ § 4.2.1 eta 4.2.2), bi mendetan plazaratu ez zen bizitasunaren adierazle. Literatur lapurtera gutxika zaharberritu zen, *literatur nafar-lapurtera* deitu ereduranzko urratsak emanez (§ 5.3.2.1). Iparraldeko koinea izaten jarraitu zuen, haren formetara makurtzeko edota euskalkiz gaindiko aldaki gisa erabiltzeko zuberotarren joera lekuko (Xaho, Arxu, Intxauspe), baina aldi berean literatur zuberera eguneratu zen (§ 8.4). Adierazle gisa, ez dira txikiak Itun Berriaren itzulpen katoliko baten lehen argitalpena (Harriet & Dassance 1855) eta Biblia osoarena (Duvoisin 1859-1865). Idazle laikoak biltzen dira larrera, eta honen arabera ere gaiak ugaltzen. Hegoaldean *Finkatze* garaian legez (§ 4.1.1.2), hizkuntz irizpideak eztabaidapean daude: Duvoisinek gutun bidez adierazi zion Joanategiri *Ehun bat sainduen bizitzeak*-en (1876) ortografiaz eta gramatikaz zituen iritziak; izan ere, Lore Jokoetan saritu lanen estilo-zuzentzaile izan ohi zen, baita *Eskualduna* aldizkariarena ere (Zalbide 2007b: 96, 95. oh.).

Giltzarria Anton Abadia (1810-1897) da: berari zor zaio Lore Jokoak Euskal Herrian ezarri izana (Urruña, 1851), 1879tik aurrera Hegoaldera ere zabalduko direnak. Idazle batzuk (Hiribarren, Duvoisin, Intxauspe…) epaimahaikide izan ziren, eta bestetzu (J.B. Elizanburu, Goihetxe, Adema…) lehiakide. Abiapuntutzat hartu dugun gramatika (1836) Agosti Xahorekin (1811-1858) izan zituen harremanen ondorio da. Honek *Ariel* aldizkari elebiduna (1844-1852) sortu zuen, eta euskarazko lehen aldizkaria, *Ariel, Uscal-Herrico Gaseta* (bi zenbaki: 1848-06-30 eta 1848-07-25ekoa), ahozko tradizioa biltzen aurrekari eta beharbada tradizioaren «asmatzaile» nagusi ere izateaz gainera (§ 4.1.3.1). Xahok eta Abadiak Euskal Herri osoa gogoan lan egin zuten: euren gramatika *Zazpi uskal-herrietako uskalduner* eskainia da. Are erabakigarriagoak izan ziren Louis Lucien Bonaparte (1816-1891) printzearekiko harremanak. Xahok aurkeztu zion Duvoisin Abadiari, eta honek Bonaparteri (1856). Idazle gehienak azken bion inguruan murgilduko dira.

Bonaparteren laguntzaile nagusiak Jean Pierre Duvoisin (1810-1891) eta Emmanuel Intxauspe (1815-1902) izan ziren, bata lapurteraz eta bestea zubereraz. Azken honek uko egin zionean, Jean-Baptiste Arxu (1811-1881) hartu zuen zubererazko itzultzaile, baina, irizpideetan ados ez zeudenez gero, honen lanak Ana Urruti itzultzaileak begiratu zituen Bonapartek hala nahita (Cid 2010; Roque 2013). Nafarroa Beherean Salaberri Ibarlakoa dukegu bere kutuna.

Duvoisini Mitxelenak «itzultzaileen errege» izena eman zion, horretan aritu baitzen nagusiki, bere kabuz edo Bonapartek aginduta. Bere lehen lana-edo dena, *Telemake, Ulizeren semearen gertakuntzak* (1833tik aurrera; Kruzeta 1997), Fénelonen liburu ospetsuaren itzulpen bukagabea da. Garai bertsuan kokatu behar *Baigorriko zazpi liliak,* 1832an bildutako ipuinez osatua (1884; San Martin 1987). Ondoko lan garrantzizkoenak: *Liburu ederra,* Kardaberatzen *Ejerzizioen* moldaketa (1856), Iturriagaren solasen itzulpena (1857), *Laborantzako liburua* elkarrizketa pedagogikoa (1858) eta aipatutako *Bible edo Testament zahar eta berria* (1859-1865).

Intxausperen argitaratu batzuk: *Jincouac guiçonareki eguin patoac* (1851; 1852tik aurrera *Uscaldunaren laguna* izenaz), San Mateoren ebanjelioa (1856), Iturriagaren solasen zubererazko itzulpena (1857), Apokalipsia (1858) eta Kenpisa (1883).

Gainerako idazleetan inor bereiztekotan, Martin Hiribarren (1810-1866) aipatuko dugu bere lanen kalitate, ospe eta nabartasunagatik: bizian argitaratu zituen hitz neurtuz *Montebideoko berriak* (1853), *Iruñeko bestak* (*Ariel,* 1853) eta *Eskaldunak* (1855), eta hitz lauz *Eskaraz egia* (1858). Argitaragabeak ere utzi zituen, artean *Napoleon lehena* poema biografikoa (1994) eta *891an, eskaldunen gerla* antzerki historikoa (1991).

Lapurterazko beste idazle batzuk: Martin Goihetxe (1791-1859), Jauretxe apaiza (?-?), Pierre-Nérée Dassance (1801-1858), Maurice Harriet (1814-1904), Mixel Elizanburu (1826-1895), Jean-Baptiste Elizanburu (1828-1891), Gratien Adema «Zalduby» (1828-1907), Francisque Laphitz (1832-1905), Basile Joanategi (1837-1921) eta Jean-Pierre Arbelbide (1841-1905). Jean Hiriart-Urruti (1859-1915) bederen, gazteago ez ezik, darabilen hizkuntzagatik ere BEMko idazlea da garbiki, nire ustez (§ 5.3.2).

Zubererazkoetan J.-B. Arxuren *La Fontaineren alegia berheziak* (1848) eta Ana Urrutiren San Juanen ebanjelioaren (1873) eta San Pedroren gutunen (1873) itzulpenak azpimarra daitezke.

#### *4.1.3. Herri-literatura*

##### 4.1.3.1. Folklorea eta apokrifoak

Tradiziozko literatura bildu nahia XIX. mendea aurrera zihoala etorri zen Euskal Herrira. Bilketa modernoaren aitatzat jo dezakegun Xahok herri-kanta zenbait bildu eta bere liburuetan argitaratu zituen (*Voyage en Navarre,* 1835; *Biarritz,* 1856). Ondotik samaldaka etorri ziren biltzaile eta zabaltzaileak: Uriarte (c. 1856; Kortazar & Billelabeitia 1987), Michel (1857), Mme. de la Villéhélio (1869), Sallaberry (1870), Webster (1877), Vinson (1883), Manterola (1877-1880), etab. Bilduma hauetan ahozko tradizioaren emaitzak koplari eta bertsolarien lanekin nahaste aurkeztu ohi dira (§ 4.1.3.3).

Biltzearen ifrentzuan —edota harekin txirikordatua— «tradizioaren asmakuntza» delakoa dago (Juaristi 1986); honetan ere Xaho dugu aurrekari: besteak beste, Aitor aitalehena asmatu zuen, *aitoren seme*-ren ustezko etimologiatik abiatuta, Tubal zokoratu eta ahantzarazirik. Apokrifoen garaia da Europa osoan, MacPhersonek Ossianena egin zuenetik (1736-1796). Humboldtek, antzinako euskaldunen lorratzen bila egin zituen osteretan (1799-1801), ez zuen ezer handirik aurkitu, ez behintzat nahi zuen bezain aspaldikorik, *Leloren kanta* izan ezik, ustez erromatarrekin izandako gatazkaren lekukotasuna, baina egiazki XVI. mende bukaerako apokrifoa (5. kap., § 2.2); XX. mendera arte ontzat emana izan zen (Mitxelena 1986), nahiz Michelek (1857) eta batez ere Bladé-k (1869) haren faltsutasuna agerian jarri. XIX. mendearen iruditeria eratu zuten gainerako apokrifoak oro garaikideak dira, eta maiz erdaraz idatziak. Benetako bezala aurkeztu zein ez, nahikoa nahastu ziren bazterrak. Bereziki ezagunak dira Garay de Montglave-renak, haren *Chant d'Altabiscar* (1834) batik bat, eta euskaraz Hiribarrenen *Heren-Sugea eta Belzuntze* eta *Abarcaren kanta* (1858) eta K. Otaegiren *Beotibarko kantua* (1882). Erdibide anbiguo bertsuan kokatu ziren leiendagileak ere: Xaho (1843), Goizueta (1851), Trueba (1859), Arakistain (1866), etab. Daskonagerrek *Les échos du pas de Roland* arrakastatsua (1867) euskaratik itzulia bailitzan aurkeztu zuen; egia bihurtu behar, eta *Atheka-gaitzeko oihartzunak* (1870) argitaratuko da, zuberera, behenafarrera, gipuzkera eta bizkaierazko itzulpenez lagundurik.

#### 4.1.3.2. Pastoralak

XVIII. mende erdialdetik aurrera baditugu pastoralen errepresentazio data eta lekuen datuak, eta errient-kopiagileen izenak; eskuizkribuetan zaharrena *Sainte Elizabeth de Portugal*-ena bide da (1750). Lehen argitaratua Vinsoni zor zaio: *Saint-Julien d'Antioche* (1891), baina urte batzuk beharko dira Hérellek (1910etik aurrera) sakon iker zitzan.

#### 4.1.3.3. Bertsolariak, poetak eta herri-literaturaren beste zenbait forma

Aztarren batzuen arabera lehenagotik datorrela suposa daitekeen arren (cf. *Egiaren kanta,* c. 1638; Urgell 1986), berez ekoizpen galkorra izanik, LEMan lehendabizikoz esan dezakegu ziurtasunez herri-literatura inprimatu bat bazela Euskal Herri osoan zehar, aldez ahozkoarekin lotua, bertsotan batez ere garatua, askotariko gaiak ukitzen zituena eta bertso-paperen bidez batik bat zabaldua. Ehundaka inprimaki gorde dira han-hemen, euskaldun xeheentzat izan zen irakurgai eskaintza oparoaren lekuko. Ezagutzera ere eman dira, hein batean bederen, batez ere Antonio Zavalak 1961etik aurrera Auspoa liburutegian egindako lanari esker.

XIX. mendean zehar indarrez hedatu zen Hegoaldean bertsolari zaletasuna, Iztuetak jadanik mirespenez aipatua (1824, Izt *D* 168-179), antza denez Gipuzkoako zenbait herritan zuen arrakastatik abiatuta. Bertsolarien izena jendaurrean egindako bat-bateko saioetan ernatu bazen ere, dudarik gabe bertso-paperek zabaldu zuten gehiena; nolanahi ere, garai honetatik gorde ditugun bertso gehienak *jarriak* dira, hots, idatziak, herriak gogoan gorde dituen bat-bateko gutxi batzuez beste guztiak (Garzia 2012: 45). Ospetsuenak, *Pernando Amezketarra* (1764-1823) eta *Xenpelar* errenteriarra (1835-1869), *Udarregi* aiarra (1829-1895) eta *Pello Errota* asteasuarra (1840-1919) bezalakoekin batera.

Herri-poetaren figura erromantikoaren ordezkari nagusiak Pierre Topet «Etxahun» zuberotarra (1786-1862; Haritschelhar 1969) eta Jose Maria Iparragirre gipuzkoarra (1820-1881; Iparragirre 1897) dira. Aipagarri ditugu, halaber, Jose Bizente Etxagarai (1773-1855; Zavala 1963) eta Indalezio Bizkarrondo «Bilintx» (1831-1876; Zavala 1978) gipuzkoarrak, eta Martin Larralde «Bordaxuri» lapurtarra (1782-1821; Haritschelhar 1963). Bestalde, Iraultzaren aurkako bertso, kantu eta bestelako idatzi anitz egin ziren, artean Salvat Monhorenak (1749-1841; Lafitte 1972). Adibide on bat da *Legeak manatu zuen juramendua egin zuten eskaldun aphezen kontrako kantuak* (Salaburu 1982).

Aldundiek eta udalek ere halako argitalpen xumeak egin zituzten, hala nola *Erregue ta bere amari agur. Donostia-ko Bilguma edo Ayuntamentua-ren erabakiz, eta bere contura, argitaratzen da moldaera* [‘poesia’] *au* (s.d. [1887]). Bizkaian ohikoa zen gabon-kantak argitaratzea, Bilbon bederen gutxienez XIX. mende hasieratik urtero, eta egile batzuk ezagun ditugu: aurrena Gandara gernikarra XVIII. mendean, eta ondoko mendean B. Mogel eta J.P. Ulibarri.

Artean kazetaritza ere sortu zen. Lehen euskal testuak *Correo del Norte* Donostiako liberalen egunkarian irten ziren (1834). Eta, dakigunez, 1844an *Ariel* sortu zuen Xahok. Dena dela, Diaz Nociren ustez (1995), *egunariak* dirateke euskal prentsaren abiapuntua: lehena Ulibarriren *Egunare euskerazkoa* izanik (1815; Ulibarri 2011b), mende erdialdetik aurrera baino ez dira hedatuko. Hauen errolda Diaz Nocik berak (1994) egin du.

Literatura erabilgarriak ordezkari batzuk ditu bi literatur euskalki nagusietan: lapurteraz *Escualdun cocinera, ceinarekin nornahic cocina ona errechki eguin baiteçake* (1864); gipuzkeraz, *Eusquerazco agricultura necazari euscaldunentzat* (1886), *Cocinan icasteco liburua* (1889; Lakarra 1989) eta *Erriko jendeentzat Osasun Legeak eta Medikantzako argibideak* (1899; Arrigain 1994). Sukalde-liburua da baita zubererazko eskuidatzi anonimo xume bat ere (Epelde 2008).

### *4.1.4. Lekukotasun dialektologikoak*

Bestelako testuak ere aintzat hartu ohi diren arren (hala nola tokian tokiko hizkeran egindako dotrinak), Bonapartek eragindakoak dira bete-betean sail honetan kokatzekoak,

asmoari begira behintzat (§7.4.2); hainbaten artean, adibidez, *La doctrina cristiana traducida al vascuence, dialecto vizcaíno, variedades de Marquina, Bermeo, Arratia, Centro y Ochandiano* (1862) edo *Le petit catechisme espagnol du P. Astete traduit en trois dialectes basques* [aezkera, zaraitzuera eta erronkariera] (1869). Are ugariagoak dira argitaratu ez zituenak, arestian kaleratuak (R.M. Pagola 1992-1999). Bestalde, laguntzaileekiko gutuneria ezinutzizkoa da erabilitako irizpideak eta beste hainbat datu jakingarri ezagutzeko (Daranatz 1928-1931; Irigoien 1957; Ruiz de Larrínaga 1954, 1954-1958; Urquijo 1908-1910, etab.).

Badu Bonaparteren lanarekiko antzekotasunik eta haren eraginik Campionek (1880) jatorriz gipuzkeraz idatzi zuen *Orreaga* balada epikotik beste literatur euskalkietara eta goinafarrerazko 18 hizkeratara eginarazi zituen itzulpenen bildumak.

### 4.2. Bigarren mailako lekukotasunak

#### *4.2.1. Gramatikak*

Larramendiren gramatikaren (1729) ondoren ez dugu besterik ezagutzen XVIII. mendean, salbu eta frantsesa ikasten laguntzeko Harrietek argitaratutakoa (1741; 6. kap., §5.3). XIX. mendean, ordea, lan handia eta jarraia egin zen.

Frantsesez hainbat euskal gramatika argitaratu ziren, maiz jakintsu atzerritarrek —frantsesek batik bat— eginak: Lécluseren *Grammaire basque* (1826, 1874), Darrigolen *Dissertation* (1827), Abaddia eta Xahoren *Études grammaticales* (1836), Intxausperen *Le verbe basque* (1858), Gèzeren *Grammaire basque* (1873), van Eysen *Essai de grammaire* (1865-1867) eta *Grammaire comparée des dialectes basques* (1879) eta Ribary-ren *Essai sur la langue basque* (1877), besteak beste, gehi argitaragabeak, hala nola Charpentier (c. 1820) eta Belsunzerena (1857; Mounole 2003). Tartean, S.-H. Blanc-en *Grammaire de la langue basque, d'après celle du P. Manuel de Larramendi…* (1854) itzulpena ere argitaratuko da.

Hegoaldean ez dago ezer argitaratzerik Zabalaren *El verbo regular bascongado del dialecto vizcaíno* arte (1848), nahiz tartean Astarloaren *Plan de lenguas* (c. 1801) eta *Discursos filosóficos* (c. 1805), Añibarroren *Gramática bascongada* (c. 1804; Villasante 1969) eta Iturriagaren *compendio* ['laburpena'] galdua (c. 1840) bederen egin ziren. Bolada txarra Larramendiren gramatikaren berrargitalpenak ere (1853) hautsi egin zuen, eta ondotik Lardizabalen *Gramática vascongada* (1856; Rodríguez Ranz 2006), Astarloaren *Discursos* (1883) eta Campionen *Gramática de los cuatro dialectos literarios* erraldoia (1884) kaleratu ziren.

Azterketa historikoak ere tartekatzen dira azken aldera, hala nola Charencey-ren *Recherches sur les lois phonétiques du basque* (1866) eta Campionen *Ensayo acerca de las leyes fonéticas de la lengua éuskara* (*EE* 1883).

Nagusiki umeak hezteko eginak diren hainbat oinarrizko eskuliburu ere egin ziren Ipar eta Hegoan, euskaraz zein sarriago elebiz: Astigarragaren *Diccionario manual…* (1825), A. Hiriart-en *Introduction…* (1840), Iturriagaren *Arte para aprender a hablar la lengua castellana…* (1841), Arxuren *Uskara eta franzes gramatika* (1852; hirugarrenez, *Bi mihiren gramatika* izenaz, 1868), Egurenen *Método práctico…* (1867) eta Geronimo Zalakainen *Iracurtzaren asierac edo lenasteac* (1875). Halaber, turismoa azkartu izanak hizkuntz eskuliburuak sorrarazi zituen, hala nola Dartayet-en *Guidaria edo escu liburua frantsesez eta escuaraz* (1861), Fabré-ren *Guide de la conversation* (1862) eta Egurenen *Guía manual del lenguaje para uso de los viajeros en el país vasco* (1868).

#### *4.2.2. Hiztegiak*

Luze joango da Larramendiren *Hirukoitza*-z beste saiorik gauzatzea, eta are gehiago argitaratzea. Halere, hiztegien zerrenda etengabe emendatuko da, batez ere XIX. mendean.

1852 arte hiztegigintza Hegoaldekoen eskuetan dago, Euskal Herriko Adiskideen Elkartearen egitarautik eta hura gauzatzen hasi zen Aizpitarteren hiztegitik hasita (1773). Nagusiki idazleek eurek egindako lanak dira, tamaina txiki edo ertainekoak. Galdutako hiztegiak hasiera honetakoak dira guztiak (Astarloa, Lécluse, Iturriaga, Lardizabal). Inprentara txikienak soilik heldu ziren, hala nola Mogelen *Nomenclatura* (1801), edota eranskin gisa agertuak, hala nola Lécluseren gramatikakoa (1826), Astigarragaren *Manual*-ekoa (1825) edo Iturriaga eta Iztuetaren glosarioak (1842, It *Fab* 187-199; 1847, Izt *C* 511-519). Argitaragabe gelditu ziren Añibarroren *Voces bascongadas* (c. 1804; Villasante 1963), Zabalaren «Otxandioko eskuizkribua» delakoa (1820 ondokoa), Iztuetaren *Vocabulario de vascuence* (1832 ondokoa; Urkizu 1996) eta beste batzuk, hala nola Ulibarrirena (Ulibarri 2011a). Iparraldean bi salbuespen: Joan Felipe Belaren eleaniztuna (1745 ondokoa; Peillen 1983b) eta «Sbarbi-Urquijo» delakoa (1826 ondokoa), garai batean Etxeberri Sarakoari egotzia (6. kap., § 5.5).

1853-1883 bitartean Iparraldeak aurrea hartu zuen: Xahoren hiztegiaren argitalpen bukagabetik hasita (1855), Salaberri (*Vocabulaire de mots basques bas-navarrais,* 1856), Fabré (*Dictionnaire français-basque,* 1870) eta van Eysenak (*Dictionnaire basque-français,* 1873) ikusi zuten argia, lan xume batzuekin batera. Argitaragabeetan, Hiribarrenen hiztegia (1862) aipatu behar, baina batez ere Maurice Harriet (c. 1875) eta Jean Duvoisinen (c. 1880) euskara-frantses hiztegi handiak.

Tarte berean Hegoaldean, azkenik ere *Hirukoitza* berrargitaratzea lortu arren (1853), obra xumeak baino ez dira egiten eta argitaratzen, hala nola Egurenen *Vocabulario* txikia (1868) eta Manterolaren *Cancionero*-ko glosarioa (1880; *CancB* III, 343-450). Ostera, 1883tik aurrera, emanaldika, Aizkibelen *Euskeratik erderara biurtzeko itztegia* handia

argitaratuko da, harpidedunei esker, eta laster baita Novia de Salcedoren *Diccionario etimológico del idioma bascongado* ere (1887).

Azken tarte honetako lanetan nabarmentzekoak dira, euren berritasunagatik, bi landare hiztegi, Lakoizketa (*Diccionario de los nombres euskaros de las plantas,* 1888) eta Althaberena (*Ciberouko botanika edo lantharen jakitatia,* 1900), eta Stempf-en *Vocabulaire des poésies de Dechepare* (1889), testu zahar baten lehen lexikoia. Deitura hiztegien familiari honek eman zion hasiera: Josef Francisco Irigoyen, *Colección alfabética de apellidos bascongados con su significado* (México, 1809, 1868), Manterolak Donostian berrargitaratua (1881).

#### *4.2.3. Erdarazko liburuak*

Ezinezkoa da LEM behar bezala ulertzea, etxean eta kanpoan euskararen ezagutza eta euskal iruditeria modernoa hedatzeko balio izan zuten frantsesezko eta gaztelaniazko hamaika lan kontuan izan gabe. Esan gabe doa haietako batzuek erabateko eragina izan zutela baita euskaldunen gogo eta lanetan ere. Labur beharrez, bi talde nagusi aipatuko ditugu: euskara edota Euskal Herria deskribatzen edo aldarrikatzen dutenak, eta lan bibliografikoak.

Lehen taldean, Larramendiren apologiaz gainera (1728), zeinek bere garrantzia izan zuten orduan Astarloarenak (1803) eta Erroren *Alfabeto primitivo*-ak (1806; ingelesez, 1829; frantsesez, s.d.). Mogelen idatziak argitaragabe geratu ziren luzaro: *Disertaciones* (1854), *Apología* (1891) eta *La Historia y la Geografía de España ilustradas por el idioma vascuence* (1935). Lanbide bertsuari heldu zioten Sanadon-ek (*Essai sur la noblesse des basques,* 1785; gaztelaniaz 1786, 1858), Zamakolak (*Historia de las naciones bascas,* 1818), d'Iharce de Bidassouet-ek (*Histoire des Cantabres,* 1825) eta Xahok (*Histoire primitive des euskariens-basques,* 1847).

XIX. mendean biziki gora egiten du euskalduna bezalako herri antzinakoen gaineko jakin-minak eta euskara bezalako jatorri ezezaguneko hizkuntzen gainekoak. Hainbat egile saiatzen da horretan, batzuk zentzuz eta ofizioz, bestetzuk gogo beroz eta irudimenez, saga trinko bati hasiera emanik: Humboldt (*Untersuchungen über die Urbewohner Hispaniens,* 1821; frantsesez, 1866; gaztelaniaz, 1879), Michel (*Le Pays Basque,* 1857), Lejosne (*Mémoire sur l'origine des Basques,* 1859), Charencey (*Recherches sur les origines de la langue basque,* 1859), Garat (*Origines des Basques,* 1869), Bladé (*Études sur l'origine des Basques,* 1869), Broca (*Sur l'origine et la répartition de la langue basque,* 1875), Velasco (*Los euskaros en Álava, Guipúzcoa y Vizcaya,* 1879), Vinson (*Les Basques et le pays basque,* 1882), etab.

LEMan tradizio konpartitu batez mintzatu ahal izatea (§ 3.3) bibliografia lanari zor zaio hein handi batean. Larramendiren hiztegiko liburu zerrendak (1745: xxxiv-xxxvi)

ezarri zuen oinarriaren gainean eratuko da azkenik Vinsonen *Essai d'une bibliographie de la langue basque* bikaina (1891-1898), tarteko ekarpen frankori esker, hala argitaragabeak (Humboldt c. 1817 [Hurch 2012]; Aizkibel 1833 [Torrealdai 2009], Duvoisin 1876 [Altuna 1987], J. I. Arana 1896 [Arana Martija 1997]) nola argitaratuak (Lécluse 1826: 15-24; Abadia 1836: 28-50; Zabala *Noticia…,* 1856; Michel *LPB,* 1882: 476-532; K. Etxegarai *Ensayo de un catálogo…,* 1886; Allende Salazar *Biblioteca del bascófilo,* 1887).

### 4.3. Lekukotasunen nolakoa

Bakanki baino ez da landu euskal liburuen testuingurua. Paratestuak eurak (hitzaurreak, eliz oniritziak, eskaintzak, harpidedun zerrendak, etab.) oro har ikertu gabe daude, inoizka haietatik berri jakingarriak atera badira ere. Gure aldetik, zenbait ildo jorratzen ahalegindu gara, nabarmenenak bederen, aurrerantzean gehiago landuko direlakoan.

#### *4.3.1. Gehiago idatzi eta argitaratzea zaildu*

Euskarazko argitalpenen kopurua biziki hazi zen (Sarasola 1976): 1545-1749 artean guztira 73 liburu argitaratu ziren bitartean, 1750-1879 artean 514, hau da, halako zazpi ia denboraren erdian edo, bestela esanda, urteko 0,35 liburutik urteko laura. Hazkundea batez ere berrargitalpenei zor zaie (% 70), irakurleen eskaera gorantz zihoalako seinale.

Zehaztu gabe dago argitaragabe gelditu zirenen kopurua, baita 1840tik aurrera baino argitaratu ez zirenena ere (§ 4.3.7). Halaber, ezinezkoa zaigu zenbat eskuizkribu galdu ziren asmatzea, nahiz batzuk izen eta guzti ezagunak izan. Badakigu batzuetan eskurik esku ibili zirela eta noren eskuetan gorde ziren. Zarauzko frantziskotarren komentutik irten ziren, adibidez, *Peru Abarka*-ren (1881) eta Larramendiren Azkoitiko sermoiaren (Lakarra 1985b) lehen edizioak egiteko erabili ziren eskuizkribuak. Guztiek ez zuten aukera bera izan: esaterako, Lardizabalen paperak 1910 aldean erre omen zituztenez, galdutzat ematen ditugu haren lan batzuk, egiten ari zen hiztegia barne (Urgell 1999). Tarteka idazle zenbaiten obra osoa zerrendatu eta datatu da (bizkaierazko idazle klasikoak Altzibar 1992a-n; Agirre Asteasukoa F. Altuna 1999n, etab.), herriaren ahotik jaso (Etxahunena Haritschelhar 1969n) edo bertsopaper eta bestetatik (Etxagarairena Zavala 1963n, Monhorena Lafitte 1972n, etab.). Egia da batzuk ez zirela argitaratzeko asmoz egin: hala Zarauzko misiolarien sermoitegiak, nola XVIII-XIX. mendeetako dotrina eta sermoi nafar ugariak, badirudi norberak erabiltzeko eginak direla. Egia da, dena dela, idatziak nekez heldu zirela moldiztegira, Hegoaldean nagusiki *Finkatzean* (1783-1840) eta Iparraldean *Gainbeheran* (1836 arte).

1766an eman zen Espainian euskarazko liburuak argitaratzeko lehen debekua, artean Gaztelako presidentea zen Arandako kondearen aginduz, S. Ignazioren bizitzari

buruz Kardaberatzek egindako lanak eragindakoa. Aginduak zehatz-mehatz esaten du «berak jakin ezean, [Nafarroako] Kontseiluak ez dezala baimenik eman, gaztelaniaz beste hizkuntza bateko liburuak argitaratzeko» (itzul.). Badirudi arazoa funtsean ez zegoela Madrilen bakarrik: adierazgarria da Kontseiluak ohiko prozedura aldatuta Madrilera jotzea iritzi eske eta Arandaren agindua aho batez onartu ere onartzea. Baliteke, hortaz, debekuak zerikusia izatea ez hainbeste hizkuntzarekin, baizik eta hurrengo urtean Lagundia Espainiatik egotzi izanarekin.

Edonola ere, handik aurrera euskaraz argitaratzea ez zen ezinezkoa izan, baina bai oso zaila. 1766-1800 bitartean obra txikiak argitara ziren, hala nola Olaetxearen dotrina (1775, etab.), P.J. Alzabal Murgiaren *Ama Virgina santisima Yciarcuaren bederatci urrena* (1768, 1790), Basterretxearen bertsoak (1777), *Errosario edo coroa santua* (1780), Ubillosen dotrina (1785) eta baten bat gehiago, denak Nafarroatik kanpo, Hiru Probintzietan (§ 4.3.8). De la Quadrak (1784) argitaratzeko prest zeuzkan eta sekula argitaratu ez ziren bi liburuetako baten atarian hauxe idatzi zuen: «Madriletik dioskute euskarari dioten ezinikusi handia, eta honegatik baimena eskatzea eta ukatzea, dena bat izango da» (itzul.; Bilbao 1998), eta 1793an Añibarrori *Esku-liburua* argitaratzeko baimena ukatu omen zitzaion (Urkizu 2000: 236, iturririk aipatu gabe).

1800ean Mogelek ezin pozari eutsi Espainiako erregeak Nafarroako Kontseiluari agindu baitzion bere *Konfesio*-aren argitalpenari uko egin ez ziezaion, ezta euskaraz idatzitako besteri erlijoaren aurkakorik ez izatekotan: «Hau bai garaipena gure hizkuntza zapalduarentzat!» (Villasante 1964). Baimen berezi bat lortu zuen Mariano Luis Urquijo ministro bilbotarrari esker eta, harrezkero, bi frantsesteen artean argitaratu ziren, bata bestearen ondoren, J.A. Mogelen (Mg *CC* 1800, Mg *CO* 1803), Añibarroren (Añ *EL* 1802, Añ *LoraS* 1803), Agirreren (AA *CCErac* 1803) eta B. Mogelen (VMg 1804) idazlanak, bai eta erdaraz Astarloaren *Apología* (1803) eta Erroren *Alfabeto* (1806) ere. Dena dela, Gerrikori bere sermoitegi handia osoki erdarara itzultzeko baldintza jarri omen zitzaion (1805; Villasante 1979: § 251), eta hori dela eta edo, ez zen 1858 arte irten. Gerrak edo atea berriz itxi zuen 1816 arte, eta orduan erreskadan atera ziren fr. Bartolomeren bi obra (fB *Olg* 1816, fB *Ic* [I] 1816, [II] 1817, [III] 1819), eta J.J. Mogelen (JJMg *BasEsc* 1816) eta Pedro Astarloaren bana (Astar [I] 1816, [II] 1818).

Arazoak ez ziren han amaitu: Iturriagak ez zuen lortu gramatika argitaratzerik, nahiz horren esperoan egon: «Aurrera daramat nire gramatika, *Aita Larramendiren gramatikaren laburpena* ["un compendio"] edo antzeko izenburua izango duena. Honela errazago lortuko da argitaratzeko baimena, eta guk *Ezina egina*-ren berrargitalpenaren baliokidea lortuko dugu» (Iztuetari gutuna, 1840; itzul.).

Iparraldean argitaragabe gelditu ziren Iraultza aurreko idazlan ausartenak, hala nola Haranederren *Testamentu Berria*-ren lehen itzulpen katolikoa (1740; Altuna 1990),

*Kadet eta Bettiriño* elkarrizketa pedagogikoa (c. 1750; Padilla 2011), Duhalderen *Birjinia* eleberri itzulia (1783-1784; Mujika 2010) eta Egiategiren hiru liburuak: *Aberatstarzun guzien giltz bakotxa* etxe-ekonomiako tratatu bukagabea (c. 1780; Peillen 2012), *Filosofo huskaldunaren ekheia* (1785; Peillen 1983a) eta *Mundiren berritzias Musde Etxeberriren gogomenak* izena edo izan behar zuena (c. 1778; Peillen 2011).

Iraultzak ez zituen argitalpenak osoki eten, baina bai zaildu. Ez da ezer berririk kaleratzen Baratziarten obratik (1784) *Andre-dena Mariaren ilhabethea* arte (1838), salbu eta Duhalderen *Meditazioneak* (1809) eta beste zenbait obra txiki. Argitalpenak isilean egiten ziren: adibidez, Lavieuxvilleren dotrinaren edizio batzuk 1788an aurredatatuak daude —hots, dagokien baino aurreragoko data batekin atera ziren—, zehazki Iraultza aurreko azken edizioaren datarekin, liburugileek agintearekin arazorik izan ez zezaten, nonbait; Baratziarten liburuak edizio aurredatatu bat (1787ko dataz, argitaratzailea ere haste letretan ezkutatua) eta data gabeko hiru edizio izan zituen Cluzeau-ren etxean (c. 1816, c. 1818, c. 1820), baina 1824ko edizioaz geroz oro har denek data eta lekua aitortzen dituzte.[17]

#### *4.3.2. Dokumentazio asimetrikoa*

Hurrengo taulak —Sarasolarenetik (1976) moldatuta— lehen ikuspegi bat emango digu literatur euskalki bakoitzeko argitalpenei dagokienez:[18]

| | 1545-1749 argitalpenak | 1750-1879 argitalpenak | 1545-1749 Lehen edizioak | 1750-1879 Lehen edizioak | 1545-1749 originalak | 1750-1879 originalak |
|---|---|---|---|---|---|---|
| B | 2 | 74 | 2 | 24 | 1 | 13 |
| G | 8 | 187 | 7 | 69 | 3 | 44 |
| L | 53 | 206 | 25 | 53 | 12 | 22 |
| Z | 10 | 47 | 6 | 8 | 2 | 4 |
| Heg | 10 | 261 | 9 | 93 | 4 | 57 |
| Ip | 63 | 253 | 31 | 61 | 14 | 26 |
| Guztira | 73 | 514 | 40 | 154 | 18 | 83 |

17. Datu hauek guztiak Vinson (1891-1898) lanetik atereak dira.

18. Kontuan har bedi Sarasolak liburuak bakarrik (48 orrialdetik gorako argitalpenak) jaso zituela, eta goinafarrerazko, behenafarrerazko eta araberazko bakanak hurrenez hurren gipuzkerari, lapurterari eta bizkaierari egotzi zizkiola. Hurrengo laburdurak erabiliko ditut: A = arabera, B = bizkaiera, BN = behenafarrera, G = gipuzkera, GN = goinafarrera, Heg = Hegoaldea, Ip = Iparraldea, L = lapurtera, Z = zuberera.

Bistan da Iparraldea eta Hegoaldea ez zihoazela bat. LEMan ediziogintzan parean badabiltza ere (baina Hegoaldekoa 1750 baino lehen % 14 izatetik gero % 50 izatera igaro da), eta lehen edizioetan berdintsu (nahiz Hegoaldeak % 60 egin), obra originaletan, hau da, jatorriz euskaraz idatzizkoetan Hegoaldeak aurrea hartu du nabarmen (% 70).

Bizkaierak erpina jo zuen *bizkaiera klasikoa* deritzagunarekin, 1802tik aurrera (§ 8.3): 1879 arte argitaratutako liburuen % 85 data horretaz geroztikoak dira. Zehazkiago, euskalki honen urrezko garaia 1802-1820 artean kokatu behar: 1750-1879 bitartean argitaratutako hamahiru obra originaletan bakar bat ere ez da 1850 ondokoa, eta bederatzi 1820 baino lehenago atera ziren; 26 liburu argitaratu ziren lehen aldiz, 16 1800-1850 artean eta lau ondoren. Badirudi 1850-1880 arteko uneren batean argitalpen-jarduna bera moteldu zela bizkaieraz: adibidez, Añibarroren *Esku-liburua* etengabe atera zen 1866 arte (zazpi edizio), baina ez dago besterik Azkuek klasiko gisa berreskuratu arte (1891).

Gipuzkerak hurrengo paradoxa sortzen digu: 1745 arte ia dokumentatu gabeko euskalki hau LEMko euskalki nagusi bihurtu ere bihurtu zen (§ 8.2): 1750-1879 arteko argitalpen guztien % 36a biltzen du, lehen edizioen % 45a eta obra originalen % 53a.

Alderantziz, lapurtera lehengo aldean franko jaitsi zen (§ 8.1): asko argitaratzen zen, beste lurraldeetan baino gehiago, baina 1750-1879 artean hala lehen edizioak nola obra originalak erdira jaitsi ziren (% 50 > % 25 eta % 23 > % 11, hurrenez hurren).

Aldi berean zubereraren datuak goraka doaz (§ 8.4), aurreko garaien halako bost ia. 1545-1879 arteko argitalpen guztien % 82a 1749 ondokoa da. Aldea ez da hain handia lehen edizioetan eta obra originaletan, batez ere kopuru absolutuetan (8 lehen edizio, 4 obra original), baina adierazgarria bai.

Gainerako lurraldeetako mintzoak burua agertu ez agertu dabiltza, hein handi batean literatur euskalkien eraginez (§ 7). Bestenaz, normala baino ez da Arabako euskararen lekukotasunak bakanak izatea, eta XIX. mendean ipar-mendebaldekoak bakarrik (§ 2.1.1). Goinafarreraz argitalpenak urri bezain ugariak dira eskuizkribuak, dialektologia historikoari etekinak ateratzeko adinakoak (Camino 2004). Etxeparerengandik argitaragabe zetzan behenafarrerak tamaina bateko lekukotasunak ditu LEMan, gutxitxo badira ere (§ 4.1.2.1).

#### *4.3.3. Egileak nolako*

Villasanteren *Historia de la literatura vasca*-n (1979) atal propio bat merezi izan zuten 1745-1880 arteko 56 euskal idazleen soslaia hauxe da: gizona (% 98), elizgizona (% 69) eta erdialdeko lurraldeetan jaioa, Gipuzkoan edo Lapurdin (% 55).

Oro har kontserbatzaileak dira, Erregimen Zaharraren aldekoak. Larregik (1775) honela adierazi zuen: «eskaldun zareten guziak, (…) beira zaitezte utztetik zuen izpirituak eta zuen bihotzak mende dohakabe huntan libertinkeriak eta zoramenduak

asmatzen dituen (…) berritasun ondikozkotarat». Iraultzak are gehiago asaldatu zituen. Mogel (1800, Mg *CC* v-vi) —eta berarekin batera beste asko— oso kezkatuta ageri da mugaz bestaldetik iristen zaizkion berriez. Salbuespen gisa, gure idazleetan batzuk errepublikazaleak dira (Hiribarren), liberalak (Gipuzkoan batez ere: Iturriaga, Iztueta, Bilintx…) edo are haratagokoak (Xaho). Idazle laikoak, «kide gutxi dituen kofradia» (Cid 2010: 67), gero eta gehiago dira, 1840az geroztik batik bat.

Estereotipo maskulinoa Bizenta Mogelek hautsi zuen. *Ipui onak*-en hitzaurrearen buru-buruan (1804) hauxe dio: «Badakit, enzunaz beste gabe neskatx gazte baten izena dagoala itxatsirik liburutxo onen aurrean, jardungo dutela siñuka ez gutxik, diotela beren artean (…) ez dagokiola neskatxa bati bururik ausitzea liburugiñen: asko duela gorua naiz jostorratza zuzen erabiltzea». Zerrenda Villasanterenean (1979) ez dauden bi izenez osatu beharra da. Lehen, Maria Antonia Soloaga Gerenagoena, *Octabas de la agonía de la muerte* poema eskuidatziaren egilea (1787 b.l.; Manterola 1983). Bigarren, Ana Urruti zuberotar protestantea (§ 4.1.2.2), Roquek (2013) berriki ahanzturatik aterea.

#### *4.3.4. Lekukotasunak eta hizkuntz mota*

LEMan lekukotasunek asko irabazten dute kalitate eta nabartasunean. Esan gabe doa honek berebiziko garrantzia duela, zeren eta jakina baita genero bakoitzaren konbentzioek muga lezaketela, edo heda, testuetan aurkituko dugun hizkuntz erakusgarria. Dotrinek, esaterako, ez diote eguneroko lexikoari lekurik eman ohi; oro har arrotz dituzte toka eta noka, subjuntiboa, alegiazko baldintza eta horrelakoak, sintaxi bakun eta zurruna izateaz gain.

Erlijio literaturak nagusigoa mantendu arren (1750-1879 bitartean argitaratu ziren liburu originaletatik % 89a), sermoitegiek, entzuleen bihotzak hunkitu behar zituzten *exempla*-z hornituta, lehengoaz beste era bateko lekukotasunak eskaintzen dituzte: demagun, Agirre Asteasukoak adibideak euskaldunen eguneroko bizitzatik atera zituen heinean, haientzat ohikoak bide ziren hitzak ugari dakartza lehenengoz (*aidean* 'urduri', *aldesko, ardaila, amama* 'amarauna', *bagasoka, egoaize, estropozoka…*), eta haien hizketaldi bizi zenbait, hala nola zinak eta biraoak: *Deabruak naramala! Ala Zerura noala! Emendik mugi ez nadilla!* (F. Altuna 1999: 145), *A puzoi txarra! Tximista gaiztok puskatuko al zaitu!* (ib. 147).

Era berean, *Kadet eta Bettiriño* (c. 1750) elkarrizketaren izaerak berekin dakar adizki alokutiboen erabilera oparoa; Mogelek sasi-letradu erdaldunduaren eta baserritar elebakarraren arteko hizkuntz aldea berariaz jaso zuen *Peru Abarka*-n (c. 1802); eta Duvoisinek baserri giroko termino anitz bildu zituen *Laborantzako liburua*-n (1858): *akhetx, altxa-arrastelu, arbutz, arhaldi, arkhin…* LEMan hauen antzeko dozenaka adibide eman daitezke.

### *4.3.5. Idazlanak norentzat: hartzaileak*

Euskara idatziaren bilakabidean idazleek gogoan zeukaten irakurlea erabakigarri izan zen. Gehienek elebakar eskola gutxiko edo eskolarik gabekoentzat idatzi zuten. Mendiburuk honela zioen (Mb *JBDev,* 1747): «Euskarazko libru hau, euskaldun utsentzat egina da; bada franzes, latin edo gastelania dakitenak neke gutxiagorekin ekus dezakee beste libruetan onetan erakusten dena». *Jende paubrea*-rentzat idatzi zuen Lopezek, eta *heuzcara becic eztakitenendaco* (1782) eta *bere neke-izerdiz bizia irabazten duten*-entzat Baratziartek (1784). Beraz, liburu errazak, laburrak, merkeak idazten dira, sarri itzulpen egokituak, laburtuak, irakurterrazak (Mujika 2010: 31-32; § 5.2). Gauza bera dio Añibarrok Euskal Herriaren beste muturrean:

> Eta esaten badeustazu zegaitik beti ateretan dodazan libru txikiak, ta ez nagusiagoak, eranzungo deutsut: errazoi asko gaitik, batzuk zuen aldetik ta beste batzuk niretik. Lenengoak deboziño ta espiriturik eukite ezarren, ikaratuten dira dakusenean libru andi bat; ta guztia irakurte ezarren, eztabe ezerbere irakurten. Bigarrenak eztaukee zegaz erosi libru andia, ta alan ezin irakurri leie. (Añ *LoraS*).

Bakana da irakurle zehatzago baten aipua, hala nola baserritarrak eta umeak (BMg, 1804) edo amak (Arr *GB,* 1868). Bidenabar, Agirre Asteasukoaren arabera, bere mende eta inguruan bederen euskal liburuen irakurle gehienak emakumeak ziren:

> …baña gizonak (irakurtzen dakienak ere) gutxi dira liburuaz baliatzen diranak: batzuek, zeren lotsatzen diran liburuarekin egoteaz; eta beste batzuek, zeren euskera irakurtzera ohituak ez dauden. Nork sinis dezake au? Emakumeak alde onetatik laudagarriak dira (*apud* F. Altuna 1999: xxii).

XIX. mendearen lehen erdialdean, Hegoaldean, sermoitegi handiak egiten dira elizgizonentzat, sermoiak prestatzeko euskal materialik izan zezaten, baina sermoion azken hartzaileak ere euskaldun apalak ziren, «ia guztiak beren eskulanetik bizi direnak mendietan», fr. Bartolomek dioenez (fB *Ic* III v, 1819; itzul.).

Mendiburuk emandako arrazoi haren berarengatik, bakan baino ez dago euskaldun eskolatuentzat egindako euskal libururik. Mogelen *Peru Abarka* (c. 1802), «letra gizon handitzat hartuak direnentzat» egina, salbuespen ezaguna da, bai eta beraren itzulpen klasikoak ere, «jakin daien guztiak, guztirakua dala euskerea» eginak (Mg *PAb* 202). Hala ere, Mogelez gain gutxi batzuk (Egiategi, B. Mogel, Iztueta, Duvoisin…) literatur generoaren edo jatorrizko hizkuntzaren pareko euskara batean idazten ahalegindu ziren, halako irakurleak bilatzeko (edo sortzeko) esperantzan. 1850etik aitzina argi dago badirela erregistro jasoago bat ulertu ez ezik espero ere duten irakurleak, Gipuzkoan batik bat (§ 5.5.2.1).

#### *4.3.6. Liburu estimatuenak*

LEMko liburu batzuek bizitza luzea izan zuten.[19] Hegoaldean alde handiz argitaratuena Kardaberatzen *Eskuliburua* izan zen (26 bat aldiz 1826-1901 artean). 1783-1840 artean, berriz, Añibarroren *Esku-liburua* (1802-1897) eta Etxeberriaren *Deboziozko bizitzarako* (1821-1885), zazpina ediziorekin. Dotrinetan aurrenik ibili ziren Irazusta gipuzkeraz (30 bat 1892 arte) eta Olaetxea bizkaieraz (16 bat 1883 arte). Astigarragaren eskuliburuak (36 baino gehiago, 1825-1917; Fernández de Gobeo a.e.) ez dauka parerik, eta bizkaieraz ere atera zen (F. Arrese-Beitia eta E. Lopez, 1884).

Iparraldean *Exerzizio izpirituala*-k marka guztiak hautsi zituen (c. 1716; 39 bat aldiz 1741-1880 artean), eta haren ondotik *Kantiko izpiritualak* (1763; 23 bat 1868 arte), *Uskara libria* zubererazkoa (14 bat 1851 arte), Baratziarten *Meditazioneak* (14, 1784-1864) eta zenbait dotrina: Astrosena lapurteraz (sei aldiz, 1824-1872) eta zubereraz Revolena (1706; c. 1743tik aurrera zazpi bat). Zubererara itzuli ziren hala Astrosen dotrina (c. 1834) nola Baratziarten liburua, *Laphourdico uscaratic Ciberoucoualat cerbait khambioreki utçuliric* (1844).

#### *4.3.7. Aurreko idazlanen berreskuratzea*

1840 ondoko garaiaren bereizgarri dira aurreko testuen lehen edizioak eta berrargitalpenak. Sustatzaile nagusiak Hegoaldeko euskaltzaleak, gipuzkoarrak batik bat, eta jakintsu atzerritarrak ditugu. Jardun honetan Eusebio Lopez liburugile tolosarra nabarmendu zen (Bidador 2001). Salbuespenik aipatzekotan, Intxauspe zuberotarrak Axularren *Geroko gero*-ren edizio berri bat prestatu izana (1864) aipatu behar.

Arrazoi askogatik eta era askotara gertatzen da, baina laburbilduta honako hauek eman daitezke nagusitzat: testuen erabilgarritasuna edota edertasuna, haien zahartasuna eta balio linguistikoa eta, azkenik, hizkuntz lanabesen edota ezagutzen beharra.

Testu asko euren erabilgarritasunagatik argitaratzen dira, maizenik helburu erlijiosoarekin. Askotan erabilgarritasuna begiruneari gailendu zitzaion, eta honek literatur hizkuntzaren bilakabidearen lekukotasun onak ematen dizkigu batzuetan. Alde honetatik aipatu dira, adibidez, Irazustaren (Lakarra 1984a) eta Kardaberatzen dotrinen edizioak (Altzibar 1991). Askoren artean, beste adibide bat baino ez ematekotan, literatur gipuzkeraren erpinean atera zen Mendibururen *JBDev* «…orain berriro Jesusen lagundi edo konpañi bereko aita euskaldun batek [J. I. Aranak], animen onerako, arretaz ikuskatu eta utsegiñak kendurik, obetu ta geitu duena» (1882). Jatorrizko hizkuntza eta

19. Kontuan izan bedi hala-hola ezagutzen ditugula orduko edizioak: Vinson 1891-1898ko datuak erabili ditugu, ia bet, oro har ez baitira berriz aztertu.

edukiaz gain besterik ere ukitu zen: Intxauspek Axularren liburuko kapituluen ordena erabat aldatu zuen, aurrekoan nahasirik argitaratu zelakoan (Haritschelhar 2003).

Ikuspegi filologikoa jakintsu atzerritarrek ekarri zuten Euskal Herrira. XIX. mende erdialdetik aurrera testu zahar garrantzizkoenetako batzuen edizioak egin ziren, haien artean lehenak Etxepare eta Oihenartenak (1847an biak, Pierre Gustave Brunet eta Francisque Michel frantsesek eginak, hurrenez hurren), bai eta ikuspegi linguistikotik interesgarri zeritzen beste zenbait testurenak ere. Julien Vinsonen lana nabarmenduko dugu, edizio asko zor baitzaizkio, batzuk egun ere kanonikotzat ditugunak Hordago argitaletxeak egin faksimileei esker, hala nola Pouvreau (1892), Harizmendi (1901) eta Argainaratsena (1910).

Bestalde, Larramendiren gramatika eta hiztegia (1853) berrargitaratu ziren, eta zenbait apologia lan —artean Etxaberen *Discursos de la Antigüedad de la lengua cántabra Bascongada* (1860) eta Astarloarena (1881)—, eta lehenengoz argitaratu ziren Zabalaren *Noticia de las obras* (1856), Aizkibelen (1885) eta Novia de Salcedoren (1887) hiztegiak, Astarloaren *Discursos* (1883), etab.

#### *4.3.8. Inprimalekuak*

Liburu gehienak Euskal Herrian bertan inprimatu ziren. Iparraldean alde handiaz Baiona da gune nagusia, lapurterazko liburuez gainera zubererazkoak ere maiz argitaratu baitziren bertan. Hantxe argitaratu ziren, halaber, *Fedearen propagazioneko urtekaria* (1877tik aurrera) eta *Eskualduna* aldizkaria (1887tik aurrera).

Hegoaldean ez dago hain nagusigo nabarmenik, baina bat aipatzekotan, Iruña izan zen 1766ko debekua arte (§ 4.3.1), eta handik aurrera Tolosa, non egin baitziren hala gipuzkerazko nola bizkaierazko liburu garrantzizko gehienak, La Lama eta ondorengoen etxean. *Erpinean,* moldiztegi berriak ere agertu ziren Tolosan, hala nola E. Lopezena (§ 4.3.7). 1820az geroz Donostian: Barojaren moldiztegiak egin zituen lanik aipagarrienak, beti-edo Aldundiaren mandatuz, eta etxe berean argitaratu zen *Euskal-Erria* aldizkaria (1880az geroz). Berriz, Gasteizen eta Bilbon gehienbat gauza txikiak edota apalak baino ez ziren egin.

Parisen eta Madrilen euskaraz bakan argitaratu zen, baina ugari euskarari edo euskaldunei buruz. Fermín Herrán foruzale arabarrak idatzi zuenez (1879; itzul.), «gure nazioaren gortean, gure merituak hain sarri zalantzan jarriak diren lekuan [argitaratu dugu *Revista de las Provincias Éuskaras*], uste baitugu gure arrazaren interesei mesede handiagoa egiten diegula».

Bordelen, Euskara Zaharrean halako garrantzi bat izan arren, LEMan esateko moduan ez zen ezer egin. Pauen bai, eskuarki zubererazko liburu apalak. Bertan argitaratu zen, bestalde, *Le réveil basque* aldizkari errepublikazalea (1886tik).

Salamancan atera ziren Larramendiren apologia (1728) eta gramatika (1729). Burgosen, *Compañiaco Hizquiroian* 'inprimategian', hiri honen izenaz ezagutzen dugun dotrina (1747). Valladoliden Arzadunen dotrinaren edizio bat, «euskaldun gastetxuben adiskide batek barristauta eta zerbait geituta» (1873). Bartzelonan, Antiaren *Zerurako bide zuzena, Librería religiosa* delakoan (1867, 1868, 1869, 1880; ondoko argitalpenak Tolosan, 1885, 1888).

Atzerrian Londres dugu aurrena, Bonapartek bertako inprenta ezberdinetan 1857-1884 artean argitarazi zituen 123 liburuak eta mapa ospetsua (1863) direla eta. Hantxe irten ziren van Eysen zenbait lan, hiztegia (1873) barne, eta Webster-en *Basque Legends* (1877) ere, besteren artean.

#### *4.3.9. Babesleak*

Arreta gutxi ipini zaio gai honi, baina izan badira euskal liburuen babesleak: bestela, nola azaldu Añibarroren argitalpenak, adibidez, haren esanetan (Villasante 1974) Zarauzko komentua baino behartsuagorik ez egonik Kantabriako frantziskotar probintzia osoan? Agian ez halabeharrez, lehentxeago Ubillosek Xabier Maria Munibe Peñafloridako kondeari egin zion *Philosophia naturalis*-en eskaintza (1762), Probintzia frantziskotarraren ongile gisa. Familia berak babestu ei zituen mogeldarrak: B. Mogelek Victor Munibe kondearen ilobari eskaini zion *Ipui onac* (1804).

Horrelako datuak han-hemen aurkitzen dira, baina ez gutxitan zehazgabe edo nahasiak. Euskara idatziaren bilakaeran, batez ere haren forma apalenetan, Elizak izan zuen zerikusia ezagun xamarra bada ere, paratestuetan zehaztuta etorri ohi den heinean, asko bide dago biltzeko erakunde zibilen eta eragile pribatuen aldetik. Larramendiren apologiak (1728) aurrealdean Gipuzkoako probintziaren armarria darama, Aldundiaren babesaren lekuko. Honek berak ordaindu zituen haren gramatika (1729) eta hiztegia (1745), eta gramatikarako Bizkaikoak ehun dukat jarri zituen (Arana Martija 1984: 500). Muniberen *El borracho burlado* (1764) Bergarako udalak finantzatu zuen. Lécluseren gramatika (1726) eta haren hiztegiaren *prospektua* (1727) Anton Abadiaren aita Michel-Arnauld d'Abbadiek, *et sic de ceteris*.

Gipuzkoako Aldundiaren babesa eta sustapena aintzat hartu gabe nekez uler daiteke lurralde horrek 1820 ingurutik aurrera euskalgintzan izan zuen gorakada. Euskalariei mandatuak egin eta dirulaguntzak eman zizkien, euren liburuak argitaratzeaz gain. Herri guztietako artxiboetan Iztuetaren *Dantzak*-en ale bana ipintzeko agindu zuen (Izt *Carta a JJMg*), eta bizi guztiko eguneko sei errealeko saria eman zion (Garmendia 1968: 204). Astigarragak *Diccionario manual*-en lehen bi edizioen aleak (1825, 1827) helarazi zizkion babes zitzan (Garmendia 1993). Iturriagaren *Arte* eta *Fábulas* herrietan banatu

zituen (1845), baita Lardizabalen gramatika ere (1855), eta honen eta *Testamentu*-aren argitalpenak ordaindu (Garmendia 1980: 409). 1803an Astarloa bizkaitarrak ere *Apología* argitaratzen laguntzea eskatu zion (Garmendia 1993), alde honetatik erakundeak zeukan ospea agerian jarririk. Harena ez dakigu, baina beranduago Zabalaren *Verbo regular* (1848) argitarazi zuen, bizkaierari buruzkoa bazen ere (Urgell 1999: xxviii, 34. oh.). Gero ere Lopez Tolosako liburugileari Aizkibelen hiztegia inprimatzeko baimena eta laguntza eman zion (*EE* 1882:4, 58-59).

Gipuzkoakoaz erraz bezain nekez bil daiteke antzeko berririk Bizkaiko Aldundiaz, epelago zebilelako seinale. Mogelen *Peru Abarka* (1858 eta 1859; Altzibar 1992a: 181), Astarloaren *Discursos* (1858, 1862 eta 1864) eta Novia de Salcedoren hiztegia (1857-1862) argitaratzekotan egon zen, betiere Uriarte tartean zela, baina hirurak anitzez beranduago egin ziren (1881, 1883 eta 1887, hurrenez hurren).

## 5. LEKUKOTASUNEN AZTERKETA[20]

Literatur euskalkiak eratzen edo aldatzen dabiltza LEMan zehar, eta haien eragina ia non-nahi sumatzen da. Literatur hizkuntzak abstrakzioak dira: berez ez dute inongo hizkera zehatzik islatzen, baizik eta konbentzioz ezaugarri batzuk hautatzen eta bestetzu arbuiatzen, bai eta aberastasuna, jasotasuna eta zehaztasuna ematen dieten osagarri berriak onartzen ere. Eta hau «akademiarik gabe» —Larramendik dioenez (1728: 7)— egin zuten euskal idazleek, gehienetan irakurritakoaz beste laguntzarik gabe. Honek azaltzen du beren artean batasun gutxi egotea eta idazle bat eta beraren idazkietan zalantzak ugari izatea, LEMko ia edozein idazle eta edozein testu aztertuta igarri den bezala. Honek azaltzen du, halaber, hizkuntz aldaketak egotea eskuizkribuetan, eskuizkributik argitaratura eta edizio batetik bestera: Añibarroren *Esku-liburua* (Urgell 1985, 1986, 1987a, 1987b) eta J.J. Mogelen *Baseerritaar nequezaleentzaco escolia* (Uranga 1987) horren adibide ezagunenetakoak ditugu. Honek azaltzen du, azkenik, batzuek inoren idatziak hobetu nahi izatea, Larramendik Mendiburu eta Kardaberatzi egindako ohar eta zuzenketak (Altuna 1982, Tellechea Idigoras 1968), Mogelek eta Agirrek Kardaberatzen dotrinei, Zabalak Astarloaren liburuari (§4.1.1.2) eta J. I. Aranak Mendibururenari egindakoak (§4.3.7) edo Duvoisinek Joanategiri iradokitakoak lekuko (§4.1.2.2). Alabaina, arrazoi beragatik erabaki batzuk testuz testu igarotzen dira, baita batzuetan euskalkiz euskalki ere.

20. Atal hau osatzeko, F. Altunak (1999), Altzibarrek (1992a, 1992b), Mujikak (2010), Pikabeak (1993), Urgellek (1985, 1986, 1999, 2001) eta Urkiza & Baraiazarrak (2000) egindako azterketak izan ditut oinarri, sarritan *Euskal Klasikoen Corpusa*-ren laguntzaz neuk tarteka egindakoez landa.

Hala bada, LEMko idazkiek euskara artean baino hobeto lekukotzen badute ere, artean baino alderdi gehiagotan ez dute egilearen sorterriko euskara islatzen, zenbat idazkia jasoago hainbat garbiago, euskara estilizatuago, hibridoago, ñabar eta aberatsago bat baizik. Dena den, literatur euskalkiak osoki batuak izatetik urrun daude eta, beraz, badituzte norberaren hizkeraren ezaugarriak islatzeko zirrikituak, bai eta, jakina, euskarak anartean jasan dituen aldaketen berri emateko ere.

## 5.1. Grafia

Hasiera batean ezin daiteke esan Euskara Zaharraren sistemarekin hausten denik, nahiz gaurko sistemarantz daramaten zenbait aldaketa jakingarri gertatu. Edonola ere, grafiaren kezkak garai osoa kurritzen du, gramatizazioa aurrera doan seinale, eta XIX. mendeko gai handietako bat da: euskarari nortasun grafikoa eman nahi zaio, grafia ahoskerari egokitu, erdal grafietatik heredatutako anbiguotasuna eta koherentziarik eza gainditu eta —garaiaren azken aldean batik bat— grafia batasuna lortu.

Proposamenak ugari dira, nahiz aldaketak herabe baino ez diren hedatuko. Hala ere, batzuek Pirinioak alde batera zein bestera zeharkatu zituzten, eta gutxika-gutxika han eta hemen ondorio beretara iritsi zen, zenbait gaitan behinik behin.

Gogoan izan behar dugu betiere, bestalde, grafia kontuetan moldiztegiak agintzen zuela: batek nahi beste aldaketa iraultzaile proposa zitzakeen (hala nola *k* orokortzea /k/ hotsa adierazteko edo letra tiletdunak hots sabaikarietarako), baina moldiztegiaren tipo-kutxetan horrelakorik ez bazegoen, diru nahikoa jarri ezean, proposamena bertan behera geldituko zen.

Honako hauek dirateke LEMko grafiaren bilakabidearen gailurrak: Larramendi (1745 batez ere), Kardaberatzen *Euskeraren berri onak* (1761), Duhalderen *Birjinia* (1783-1784) eta *Meditazioneak* (1809), Añibarroren *Esku-liburua* (1821), *Andre-dena Mariaren ilhabethea* izengabea (1838), Bonaparte (1857 batik bat) eta J. I. Aranaren *San Ignazio* (1872). Leku eta garai bertsuan gertatutako batetortzeak halabeharrezkoak ezin direla izan etsita nagoenez, erakusten saiatuko naiz ezen, Hegoaldeko (§ 5.1.1) eta Iparraldeko (§ 5.1.3) grafien historia une bateraino behintzat zein bere aldetik aurkeztu arren, ohi bezala, badirela biak batera aztertu beharra iradokitzen duten susmo sendoak —eta inoiz baita datu ziurren bat ere—.

### *5.1.1. Grafia Hegoaldean*

Larramendik bazuen hiztegia egiteko oinarri gisa grafia arautzea, Espainiako Akademiaren adibideari helduta («Discurso proemial de la orthographía de la lengua castellana», *1726: lxi-lxxxiv)*. Alabaina, aurreko guztiek baino arreta gehiago jarri bazion

ere (1729: 337-340, 1745: xxvii-xxx eta 1754: 296-298), ez zuen sekula ortografiarik proposatu; aitzitik, <h> zela eta, esaterako, «probintzia bakoitzak bereari hel diezaiola» aholkatu zuen (1729: 338; itzul.). Dena den, bazuen berezko sistema bat, aski bateratsu eta berritzaile, literatur hizkuntzan ondorenak izan zituena (cf. Urgell 2001b): nagusiki, <ç> betiko uxatu zuen —Akademiak egindakoarekin bat (1726: lxxiii)—, lapurterazko testuetan ikasitako <tz> eta <ts> orokortu (6. kap., § 3.1.3), eta <h> maileguren batean baino ez zuen baliatu, noiz bai noiz ez, eta hitz gutxi batzuetan: *hitz* eta eratorriak, *hil, hume,* erakusleak…, gehienbat homofonoak bereizi nahiz (*ura* vs. *hura, ori* 'tori' vs. *hori*), eta Iparraldeko tradiziotik hartu zituen hitzetan (*zuhur, iheslecu…*).

Kardaberatzek (Cb *EBO* 19-29) iritzi trinkoagoak aurkeztu zituen, eta lortu zuen Hegoaldeko idazleek ez zitzatela erabili —edo gutxiago erabil zitzatela— <h> eta <v>, bata zeren «emen gure euskeran [gipuzkeran] ta Bizkaian atxe ori alfarrikako edo serbitzen ez duen gauza da» (*EBO* 23), eta bestea, geroago Añibarrok azaldu zuenez (Añ *GB* 167; itzul.), zeren «ez dago euskal hitzik berekin *v* kontsonantea dakarrenik». Bestalde, Larramendik <iñ> idazten zuen (*baiña*), eta <in> edo <iñ> hitz bukaeran (*bein* edo *beiñ*); berak, ostera, <ñ> nahi zuen beti (*baña, beñ; EBO* 25), zeren «*i* ez baita esaten, ez entzuten» (*Réplica* 19; itzul.), eta honi jarraiki idatziko dute askok. Dena dela, balirudike desadostasunak daudela bere iritzien eta bere argitaratuetako grafiaren artean (adib., /ʃ/-ren adierazpenean, ik. beherago).

Añibarrok *Esku-liburu*-aren bigarren edizioan (Añ *EL*[2]*,* 1821) eman zituen lehen urratsak grafia fonetikoagoa lortzeko (Urgell 1987a), Zabalaren eraginez edo haren laguntzaz behinik behin. Lau berrikuntza nagusi erabili zituzten biek ala biek: <y> <j>ren ordez hitz hasieran (*yan, yo*), bokal arteko ohiturarekin bat eginik (*baya, gueyago*) eta /x/ ahoskera saihestu nahirik; <k> <qu>ren ordez (*oker, daki,* baina *dacar, icusi*), <sh> /ʃ/ adierazteko (*obesheago* 'hobexeago') eta <n> *b, p* aurrean (*onenbeste, canpora*). Astarloaren ideietan (Ast *Disc* 157-158) oinarritu ziren <nb>, <np>rako, eta Errorenean (*Alfabeto primitivo,* 1806: 63) <k>rako, letra honen aurka azaldu ziren Larramendi, Kardaberatz eta Mogeli aurre eginez. Azken berrikuntza honetan zerikusiren bat izan lezake Duhalde lapurtarrak (§ 5.1.3), Hernanin eta Oiartzunen bizi izan baitzen 1796-1800 artean (Villasante 1979: § 169; cf. Zav *Noticia* 1-2). Horrez gain, Añibarrok eta Zabalak <v> eta <h> erabiltzeari utzi zioten, Kardaberatzi jarraiki.

Nolabaiteko arrakasta izan zuten, literatur gipuzkeran batik bat (gogoan har bedi biok Zarauzko komentuan bizi zirela): <sh> darabilte, Ulibarriz gain, Iztuetak, Iturriagak, Arruek, eta agian besteren batek, «Donostiako eskola» delakoraino; bide batez, hementxetik datoz egun ere Gipuzkoan tarteka ikusten diren *Joshe* bezalako idazkerak. Izan ere, <sh>k irtenbide txukuna ematen zion <x> tradiziozko grafemaren anbiguotasunari, gaztelaniazko /x/ gutural gaztelaniazko balioarekin irakurtzeko arriskua baitzegoen. Gainera, sortutako

anabasa gainditzeko modua ere bazen, Larramendik <sy> eta <is> (*gosyo* edo *goiso*) erabili baitzituen, Kardaberatzek <ʃ> eta <ʃs> (*goʃo* zein *goiʃso*) —agian moldiztegiaren erabakia izan zen, zeren *Réplica* eskuizkribuan (10) <ś> tiletduna baitarabil— eta Agirre Asteasukoak <s> ondoko bokalak tileta duela (*gosô*), gehi aldaerak: Mendiburuk <is> eta <iss>, Mogelek <(i)s> eta <(i)ss>, fr. Bartolomek <is> eta <ix>, etab. Halaber, *ke, ki* dago Ulibarriren *Gutunliburua*-n (1823-1844) eta Aranaren *San Ignazio*-n (1872). Iparraldera ere iritsi ziren <y> —agian Lécluseren gramatikaren bitartez (Lecl, 1826: 15)— eta <sh> (§ 5.1.4).

Fr. Bartolomek (fB *Olg* 1816, *Ic* 1816-1819) bi berrikuntza aipagarri ditu: maiz <z> <c>ren ordez darabil hitz hasieran (*zecen, ziatz…*), eta <in> eta <il> edo <ill> <ñ> eta <ll>ren ordez (*baina, ibili*), azken honetan Iparraldean nagusitzen ari zen joerarekin bat (§ 5.2), agian ez kasualitatez.

### *5.1.2. Idazkera etimologikoa*

Grafia etimologikoak erabiltzeko idazle jasoek daukaten joera lapurtera klasikotik dator (6. kap., § 3.1.4), baina LEMan euskararen jatortasunak garrantzia hartu ahala, erdarek grafia jasoak eragiteko zeukaten garrantzia galdu eta euskarak eragindako grafia etimologikoak onetsiko dira.

Oro har ez dago latinetik datozen grafia etimologikoen arrasto handirik (<ph>, <nn>, <ti>$^{a,o}$, etc.), gizartean garrantzia galdu izanarekin bat (§ 6). Aldiz, erromantzeek badute zerikusirik grafia batzuen erabileran: LEMaren hasierako Hegoaldeko arau jasoa <v> eta <h> maileguetan bakarrik erabiltzean datza; arau honen pean jausi ziren euskal jatorrizko *vide* eta *vici* ere, lat. *via* eta *vita*-tik zetozelakoan (Añ *GB* 167; Lard *Gram* 14). Ohitura hautsi zen <v> eta <h> euskal letra jatorrak ez direlako ustea hedatu zen neurrian (§ 7.1.2), eta /x/ hotsa baztertu nahiak aldarazi zion Añibarrori *EL*$^2$-n are aldagaitzago izan ohi diren izen berezien idazkera ere (*Yesus, Yosepe*).

Euskarak eragindakoei dagokienez, morfema mugan orokor xamarra zen *ze, zi* idaztea *ce, ci*-ren ordez (*datoz* → *datozen, gauza* → *gauzetan*), ezarian bezala. Lardizabalek (Lard, 1855; Lard *Gram,* 1856) badu berezitasun bat: <tz> eta <tc> darabiltza <z> eta <c> erabiltzen diren testuinguru beretan, lapurtera klasikoko idazleek bezala (6. kap., § 3.1.3), baina *biotzean* idazten du berariaz, *biotz*-etik datorrelako (*Gram* 1).

Arreta gehiago behar dute idazleek hitz elkartu eta eratorrien lehen osagaia berreraikitzeko, *shandi* fenomenoak berariaz aintzat hartu gabe, zeren eta halako analisi morfologiko bat inplikatzen baitu, bai eta euskal hitzak ahozko kamustetik begiratu nahia ere agian. Joera hau Euskal Herri osoan zehar hedatu zen, azken batean lapurtera klasikoaren eraginez: *bat-tasun* (fB, Dv, Ur), *(h)itzcuntza* (Ht, Mb, Lg, Ub, Izt, Arch), eta are sasietimologiaz *itzkribitu* ere (Ub, Izt, Aran), *Kadet*-eko *ohartpen* zein

*onhexmendu* (<x> = /tś/), Iztuetaren *oroitpen* eta *garaitpen*, Duvoisinen *herio eta arherio* joko etimologikoa (Dv *LEd* 83), etab. Kodan txistukari afrikatuak mantendu ohi dituzte Añibarrok (*aberatstasun, eriotzco…*), Iztuetak (*eragotzpen, utsqueria…*) eta Lardizabalek (*ametslari, otspatsu, zorrotzquiro…*) bederen. Mendiburuk *dabiltzque* idazten du, *dabiltza*-ren arabera; fr. Bartolomek *deutscu, deutso*-ren arabera, *dacuszu ikusi*-ren erroari helduz, etab. Larramendiren iritziaren aurka ari ziren, berak ahoskatzen den bezala idaztea nahi baitzuen (1745: xxvii).

Erroaren eta atzizkiaren arteko bereizketa grafikoa ere egiten dute zenbaitek (Mb, Jnn, Ub, Añ…), hala deklinabidean (*bazter-etan, famili-etatic* edo *Jose gaz, gurasoa caz*) nola eratorbidean (*fruta-dunez, jaio-quizun, egin-garri*). Elkarbidean ere Lardizabalek sistematikoki *ait-amak, bas-ezti, bet-erri, egun-senti…* idazten du.

Ezezkoetan idazle batzuek batera eta besteek bestera egiten dute: batzuek Larramendik eta Kardaberatzek gorde zuten tradizioaren arabera, hots, ahoskera islatuz (*eztira, ezpada, etzaitez, enauzu*), eta besteek —Haraneder eta Mendiburu hauetakoak ditugu— etimologiaren arabera (*ez dira, ez bada, ez zaitez, ez nauzu*).

Berriz, Larramendiri jarraiki (1729: 3) ari dira soziatibo plurala <cqu> grafemaz idazten dutenak, non lehen letrak pluraleko hizkia adierazten baitu (*-c*) eta gainerakoak soziatiboko atzizkiaren hasiera (*-quin*), hau da, *guizonacquin* 'gizonekin' (Mb, Ub, Lard, Arr).

### *5.1.3. Grafia Iparraldean*

Duhalde idazlea dugu euskal grafia goitik behera berriztatzen aurrena. Proposatu zituen aldaketek *Meditazioneak* argitaratuan (1809) ikusi zuten argia lehenengoz —45. orrialdetik aurrera soilik, agian moldiztegi arazoengatik—,[21] nahiz *Birjinia* eskuizkribuan (1783-1784) jadanik izan: <v> baztertu, <qu>ren ordez <k> (*ke, ki*), <g> <gu>ren ordez *e,i* aurrean (*egin, lege*) eta aldi berean <j> ere ez bakarrik hitz hasieran (*jazarri*), baita bokal artean (*lejaltasun*) eta are maileguetan ere (*Birjinia,* ez *Birginia*); <ç> eta <tç> ere alde batera utzi zituen, <z$^{a,o,u}$> / <c$^{e,i}$> eta <tz$^{a,o,u}$> / <tc$^{e,i}$> sistema onarturik.

Darrigol gramatikagileak (1827, *Diss* 15-16) arau bihurtu zituen aldaketa horiek, eta bat gehiago erantsi: <c>-ren ordez <k> eta <z>. Aldiz, apikari afrikatua adierazteko <x> grafia zaharkituxea (6. kap., § 3.1.3) hobetsi zuen, Duhaldek ez bezala, agian Harrieten gramatikaren eraginez (1741). Oro har, badirudi bere jarraibideekin <v>, <x>, <s>, <z>, <g> eta <j> frantses erara ahoskatzeko joera ere saihestu nahi zuela; halaber, <u> (eta ez fr. <ou>) eta <i> erabilarazi nahi zituen (eta ez, adibidez, *pyramide,* ezta *yauna* ere beharbada).

21. Zabalak (Zav *Noticia* 1-2) uste zuen aurreneko zati hori beste esku batek egina zela, eta euskara eskasagokoa.

Abadiaren proposamena (1836: 8-9) berdintsua da, baina ez denean: <c> eta <qu>ren ordez <k>, <x>ren ordez <ts>, <c> eta <ç>ren ordez <z>, fr. <gn>ren ordez <ñ> eta <gu>ren ordez <gh>, italieran bezala; azken hau Xaho (*Azti beghia,* 1834) eta Arxu zuberotarrek (Arch *Fab,* 1848) bakarrik erabiliko dute.

Azkenik ere aldaketa Jauretxeri egotzi ohi zaion *Mariaren ilhabethea*-n (1838) gauzatu zen, «irakurtzea errexteagatik eta irakurtzea egin daitekeen bezen errex, xinple eta natural bihurtzeko», *eskuara alfabet naturala* delako batean laburbilduta. Egilearen hitzak ezin adierazgarriagoak dira:

> Nihork ezin sinhetsia da zoin guti den eskualdunen artean bere lengoaian trebeki irakurtzen dakienik. Iduri luke hori heldu dela irakurtzeko duten usaia eskasetik, bainan baldin gauza hurbildanik examinatzen bada, ezagutuko da errexki horren kausa berezia dela zeren, orai artean, eskuaraz izkiribatu duten autor guziek, salbu batek [Duhaldek], segitu baitute lengoaia huntan frantses orthografia, asko hitzen izkiribatzeko moldean. Hortik heldu da maiz asmuka hari behar baita irakurtzailea, eta ardura dudazka bezala, eta bethi uzkurtasunekin eta herabeki; non ez den jadanik usaia handi bat hartua. Ordu laiteke, eskualdentzat arruntean on den bezala izkiribatu nahi duenak, begiak idek ditzan gauza hunen gainean, eta xinple eta natural ezar dezan eskuara orthografia. Ez da lengoaia bat zeintan xinpleago eta naturalago ezar baititake nola gurean. Ez bedi ekhar estakurutzat orai artinoko usaia; usaia bat klarki guztiz gehienentzat kaltekor denean, utzi behar da guzientzat klarki ona denaren hartzeko (*MarIl* vii-viii).

*Alfabet natural* horretan Duhalde eta Darrigolen berrikuntzak onartzen dira, zehazki <k>, <z> eta <g> testuinguru guztietan erabiltzea, «begiek bethi letra bera ikhus dezaten gatik pronontziazione berarentzat». Denak erabili ere egin zituen, «salbu hau: C *gogorra* eta K, bi letra hauk utzi ditut *soinu* berarekin [hau da, <k$^{e,i}$>, baina <c$^{a,o,u}$> eta hitz bukaeran ere <c>]. Ene ondotik ethorriko direnek, esperantza dut, khenduko dutela oraino arras C *gogorra,* eta *soinu* horrentzat, bethi K ezarriko dutela», dudarik gabe moldiztegi arazoengatik. Ideia bertsuak aldezten ari zen Aizkibelengana (Aizk, 1883: 7) bederen heldu zen iraultza honen oihartzuna Hegoaldean.

Xahok (*Ariel,* 1845), Aizkibelek bezala euskal ortografi sistema bakar baten alde egin nahirik, sari bat eskaini zuen hoberenarentzat. Bere sistema, batez ere Darrigolenean oinarritua, hiztegiaren atarian azaldu zuen (Chaho, 1856). Besteak beste, aintzat hartu zituen <h>aren kontra Hegoaldekoek emandako arrazoiak, baina bi abantaila ikusten zizkion: literatur tradizioa eta haren bereizmena (*ari* vs. *hari* vs. *ahari*).

Ordurako egile gehienak grafia batuaren alde zeuden, hainbat artikulu eta txostenetan adierazi zutenez, baina ezin bat etorri. Taulan ikus daiteke idazle garrantzizkoenetako batzuek gai eztabaidatsuenetan zer erabili zuten:

| Gaurko grafia | $k^{a,o,u}$ | $k^{e,i}$ | -k | $z^{a,o,u}$ | $z^{e,i}$ | $tz^{a,o,u}$ | $tz^{e,i}$ | $g^{e,i}$ | ts | j |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| Gy (1852) | c | k | c | ç | c | tç | tc | gu | x | y |
| Hb *Esk* (1853) | k | k | c | z | c | tz | tz | gu | ts | y |
| Dv *LEd* (1856) | c | k | c | c | c | tz | tc | g | x | j |
| Dv *Lab* (1858) | k | k | k | z | z | tz | tz | g | ts | j |
| Ip *Verbe* (1858) | k | k | k | z | z | tz | tz | g | x | j |

### *5.1.4. Bonaparte*

Taulan ikusi berri dugu Duvoisinek obra batetik bestera bi urtetxoren epean grafia aldatu zuela, eta aldaketa ia guztietan bat datorrela Intxausperekin. Arrazoia Baionan egindako euskaltzaleen bilera batean (1857-10-14) datza, Bonaparte mahaiburu zela, ortografiaren batasuna izan baitzen gaietako bat (Zuazo 1988a: 239, 63. oh.). Printzeari egotzi zion berak (1885eko gutuna; Daranatz 1931: 332-333) ortografia arrazoizko eta batu bat ezartzeko meritua. Izan ere, Bonapartek sistema argi bat behar zuen euskarari buruz zientifikoki jarduteko, eta honengatik, esaterako, Arxuri agindu zion /g/ adierazteko <gh> ez zezala erabili (Zuazo 1988a: 240). Areago, sistema xehe-xehe bat asmatu zuen, ahozko euskarak euskalki eta hizkera ezberdinetan zituen hots bakoitza irudikatu beharrez (Bon *Verb,* 1869).

Bonapartek eta Duvoisinek aldeztutako grafia berria berehalakoan hedatu zen, lapurtarrak ziotsonaren arabera (1869-01-01eko gutuna; Daranatz 1929: 164; itzul.): «ortografia berria, gure poeten kantuek zabaldua, idazten dakiten herritarrak erabiltzen hasi dira; esku artean ditut gutun asko non <z>k <ç> baztertu duen eta <qui> eta <gui> osoki desagertu diren».

Bilakaera baten ondorio da Bonapartek literatur euskalkietan erabilarazi zuen ortografia, *Ereilearen parabola*-n 1857 eta 1878ko edizioen artean dauden aldaketek frogatzen duten bezala. Beheko taulan ageri denez, 1857an Hegoaldeko grafia tradizionala da, eta hein handian Iparraldekoa ere, baina honetan <k> dago <qu>ren lekuan, eta lapurteraz <y> hitz hasieran (*yan*, vs. Z *jan*). 1878an, ordea, testu guztietan <k>, <z> eta <g> orokortuak dira, betiere 1869ko sistemaren (Bon *Verb*) araberako beste aldaketaren batez gain, hala nola <ts> <x>ren ordez:

| Gaurko grafia | $k^{a,o,u}$ | $k^{e,i}$ | -k | $z^{a,o,u}$ | $z^{e,i}$ | $tz^{a,o,u}$ | $tz^{e,i}$ | $g^{e,i}$ | ts | j |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| G, B (1857) | c | qu | c | z | c | tz | tz | gu | ts | j |
| L, Z (1857) | c | k | c | ç | c | tç | tc | gu | x | y (L)<br>j (Z) |
| Bon (1869) | k | k | k | z | z | tz | tz | g | ts | j,y |
| G, B (1878) | k | k | k | z | z | tz | tz | g | ts | j |
| L, Z (1878) | k | k | k | z | z | tz | tz | g | ts (L) | y (L)<br>j (Z) |

Taulan jasotako grafiez gain, 1878ko edizioan <sh> agertzen da (*shoriak*) non eta lapurterazko testuan, eta bizkaieraz *-ija* zena *-iya* bihurtu da (*egaztiyak, lodiya*); bidenabar, biak ere Donostiako eskolak mende amaieran beretuko dituen grafiak (Artola, Soroa, Iraola, etab.).[22] Azkenik, zubereraz /u/ eta /v/ bereiz irudikatzeko <ou> vs. <u> tradiziozko banaketa (*çoumbait* vs. *celuco*) utzi eta <u> vs. <ü> berria onartu du (*zumbait* vs. *zelüko*), Abadiaren proposamena bere eginez (*Le Messager de Bayonne,* 1856; Zuazo 1988a: 23).

### *5.1.5. Azken orduko proposamen bat*

1869ko taulan Bonapartek zenbait letra tiletdun sartu zituen, artean <s̃> eta <t̃> gaurko <x> eta <tt> adierazteko. Baliteke hau izatea buruan J. I. Aranak alfabeto osoki berritzaile bat proposatzean, «hitzen soinuari ederki egokitzen zaiona eta euskal idazkera erabat bakuntzen duena» (Aran *Sign,* 1872: 201; itzul.), zeren eta aldaketarik handiena horrexetan baitatza, alegia, zenbait letra «tilet edo marratxo» batez markatuta zenbait hots (edo ustezko hots) adieraztean: *b* t[iletduna] <v>ren ordez, *z* t. <ch>ren ordez, *l* t. <ll>ren ordez, *p* t. <f>ren ordez, *r* t. <rr>ren ordez, *s* t. <x>ren ordez eta *t* t. <tt>ren ordez. Proposatu bai, baina obran barrena erabili ez (salbu eta <ś>, baita <k> <qu>ren ordez), moldiztegiagatik ziurrenera. Ez zuen erabili ezta 1882an berrargitaratu zuen Mendibururen liburuan ere (Mb *JBDev,* 1882: vi), «Izcribaera edo ortografiya» izeneko oharrean hauxe baitio: «*v, ch, ce, ci, gue, gui, que, qui* ordez, ipiñi dira *b, t́s, ze, zi, ge, gi, ke, ki,* letra utsunezco, mutu edo ezereztaracoac ere kenduric», hots, Bonaparteren aldaketa nagusiak onartu ditu. Zernahi gisaz, Aranaren lehen proposamen hartatik abiatuko da mende akabuko Hegoaldeko grafia berritzaileena (*Euskal-Erria* aldizkarian <k> eta <g> orokortu dira /k/ eta /g/ adierazteko, eta <s> tiletduna darabilte /ʃ/rako), eta tiletak Hegoaldeko idazkeraren ikur bihurtuko dira BEMan (8. kap., § 8.1), Azkueren *Euskal Izkindea*-tik beretik abiatuta (1891).

### *5.1.6. Azentua*

Ez dugu Iparraldeko daturik, eta Hegoaldekoak ez dira nahi bezain zehatzak. Dena dela, ezaguna da Larramendik azentuari gramatikan atal oso bat eskaini ziola (1729: 336-372), mendebaldeko azentueraren deskribapen ontzat hartua (Hualde 1991) eta

22. Honek pentsarazi behar digu Donostiako eskolako idazleen *-iya* jatorriz ez dela Markinako eskolako idazle bizkaitarren *-ija*-z beste hots bat adierazteko berariazko irtenbidea, hiatoaren aurkako hotsa irudikatzeko modu orokor bat baizik.

bestelako azentuera, goinafarrerarena, zintzo eta xeheki lekukotzen duela Lizarraga Elkanokoak (Mitxelena 1976). Larramendiren eragina dagoke mendebalde zabaleko testu batzuetan ageri den azentu bereizgarrian (erg. sing. *-ác* vs. pl. *-ac*), eta nabariago adizki batzuetan (*dá, dán, dirá, dirán*…). Hala ere, tilde grafikoren bat Lardizabal arte gutxienez aurkitu arren (baina ez Iztuetarenean, esaterako), bakana da eta, antza denez, irizpide ezberdinen araberakoa: Kardaberatzek gutxi batzuetan baino ez zuen markatu, Mendiburuk liburu batzuetan bai eta bestetan ez, Añibarrok *Esku-liburua*-ren lehen edizioan bai (1802), baina bigarrenean ez (1821), fr. Bartolomek *ló* eta *á* 'hura' erakuslea bezalako forma laburretan baino ez, eta abar.

## 5.2. Fonetika-fonologiak

Dagoeneko zerbait esanak gara esaten denaren eta idatzi behar denaren arteko tirabiraz, idazkera etimologikoaren haritik (§5.1.2). Izan ere, euskal gramatika landuago eta hobeto dakite hotsak galdu edo aldatu direla, eta honek ondorio argiak izan zituen literatur hizkuntzan: esan, *hizkuntza, deusku* edo *gauzetan* esaten zuten, baina idatzi *hitzkuntza, deutsku* eta *gauzaetan* idatzi behar zela uste zuten (eta agian ahoskatu ere bai), nolatan eta ahozko erabilerak hizkuntzari eragindako kamusteak ekidin nahiz edo, bestela esanda, hizkuntza bere antzinako osotasunean agerrarazi nahiz. Ildo honetatik datozke, bada, ondoren iruzkindu behar ditugun gertakari asko, gehienak testu landuetatik jasoak, non ahozkotik idatzira doan tarte handia nabarmen agertuko baita. Alabaina, honen ifrentzuan, ahozko berrikuntzak ere ongixko lekukotzen dira, nagusiki ahozkotik gertuago dauden testuetan, zeintzuen adibide gisa *Dotrinazko sermoitegia* (aurrerantzean *DotSerm,* c. 1775; Ulibarri 2015) baliatuko dugun, arkaismo eta berrikuntza biziki interesgarriak zituen hizkera ezezagun —ziurrenik Aiaraldeko— baten lekukotasuna baita, izan ere.

### *5.2.1. Arkaismozaletasuna*

Añibarrok *Esku-liburua*-ren lehen edizioaz geroz (guztiz *EL*²-n, 1821) egin zituen aldaketek (Urgell 1985, 1986, 2001a) erakusten digute jaioterriko mintzoaren joera berritzaile zenbaiten kontra jokatu zuela, eta honek aukera ematen digu pentsatzeko bera bezalako beste idazle kontuzko batzuek ere berariaz osoagotzat edo jatorragotzat zituzten formen alde egin zutela:

a. Euskara Zaharretik (6. kap., §3.4.3) lekukotzen diren aditz uzkurdurak (*bozu* 'badozu', *egingozu* 'egingo dozu', *emoeban* 'emon eban', *gurozu* 'gura dozu'…) uxatzen ahalegindu zen. Maila bateko gainerako idazleetan ere *bozu* (Cb, Zav,

Ur),[23] *emoeban* (Oe, Mg) eta *gurozu* (Mg) bakan batzuk baino ez dira lekukotzen, eta *egingozu* tankerakorik ia bat ere ez (cf. *ikusikozu* Añ *LauEv*).

Fr. Bartolomek eskuizkribuan hutsik egin gabe *leez* 'bezala' idatzi zuen eta argitaratuan *leguez* (*lez*-en lehen agerraldiak XIX. mende bukaerakoak izango dira), *lei* > *legui* 'lezake' aldatu zuen, Añibarrok bezalaxe, eta *-raino* > *-raguino* (*orduraino* > *orduraguino*). *Egin*-en adizkietako *g* hori jaso ez jaso dabiltza idazle gehienak: *dagizu-* (Cb *CatV,* Añ, Mg, Astar, Zav) vs. *daizu-* (Oe, Añ, Mg, JJMg, Astar, Zav), *legi-* (Cb, Añ, Mg, JJMg, Astar, Zav) vs. *lei-* (Cb, Oe, Añ, Mg, JJMg, Astar, Zav, Ur). Forma jokatugabeetan, aldiz, gehienek forma osoa ematen dute, inoiz *eite-* jasotzen bada ere (Añ, Astar, Zav, Ur).[24] Ostera, oro har *-ragino* hobetsi edo erabili behintzat egingo dutenak (Añ, JJMg, Zav) gutxiengoan dira.

Beste muturrean, *DotSerm*-en *espaidi* 'ez badidi', *baitues* 'badituzte', *eitus* 'ei ditu', *eiten* 'egiten' (baina *egin*), *ongo* 'egongo', *eingoireala* 'egingo direla' eta *viyosues* 'behar dituzue' bezalakoak nagusi dira edo bakar.

*b.* *Riu* araua (*arima* > *arime* aurreko *i*-aren eraginez*, eztaukat* > *eztauket* aurreko *u*-aren eraginez) ahaleginean baztertu zuen, baina itzuritakoengatik ezagun da berez joera handia zegoela hego-sartaldeko hizkeretan, *DotSerm*-ek estalkirik gabe lekukotzen duenez, eta lehenago *Viva Jesus* dotrinak (c. 1640).

*c.* *a* + *a* > *ea* (*neskea*), *e* + *a* > *ea* (*bidea*), *i* + *a* > *ia* (*gorria*)*, o* + *a* > *oa* (*gurasoa*) eta *u* + *a* > *ua* (*burua*) eredua baliatu zuen, ziurrenik bere jaioterriko hizkerari zegokiona, baina baita eredu zaharra ere, Kapanaga (Cap 1656), Kardaberatz (Cb *CatV* 1762) eta Olaetxearekin (Oe 1763) bat etorririk; eta ez zuen oharkabean egin, Markinako idazleena baino zabalduago zegoelakoan baizik (§ 8.3).

d. Markinarren absolutibo pluraleko *-aak* eta inesiboko *-aan* (*plazaak, plazaan*) onartu zituen, Zabalak ere bezala, nahiz Uriarteren itzulpenetan sortaldeko azpieuskalkian baino ez agertu. Berdin jokatu zuen *a* + *e* zein *e* + *e*-tik datorren *ee*-ri dagokionez (*etxe* → *etxeetan, plaza* → *plazeetan*), eta bilakabide bera izan zuen Mogelek, hots, *è* > *ee* (Altzibar 1991b: 624).

e. Markinarrek (inoiz Zabalak ere) badituzte erro barruko bokal bikoitzak ere: *daantzut* (Mg), *edaan* (Mg, JJMg, Zav), *jaan* (Mg, JJMg, Astar, Zav), *maats* (Mg, Zav), *txaal* (Mg, JJMg), *zoor* (Mg); Añibarrok *edaari* eta *eskaari* bezalakoak baino ez ditu (< *eda(n)* + *-ari,* etab.). Aldiz, *leen* (< *lehen*) esan liteke orokorra

23. Uzkurduraren adibide gehien-gehienak baldintzazkoak dira; beraz, galdua zen *badozu* (baldintzazkoa) vs. *bozu* (baiezkoa) oposaketa zaharra.

24. Uriartek *eite-* Orozkoko dotrinan baino ez dauka, eta honetan ere *ez eite-* testuinguruan baino ez.

dela (Oe, Añ, Mg, Astar, Zav, Ur), *len*-ekiko lehia bizian bada ere (Cb, Oe, Añ, Mg, JJMg, Astar, Zav, Ur).

f. Oso-nahi beretik datorke xix. mendeko maila bateko idazle gipuzkoarrek (Izt, Lard, Ur, Arr, Aran, Ant) *a + e > e*-ren ordez *ae* lehengoratzea: *gauzaen* 'gauzen', *gauzaetan* 'gauzetan'. Agian testu zaharretan ikasi zuten (cf. § 5.3.1.2, Olaetxearen erabileraz).

g. Añibarrok eta bestek ahalegina egin zuten euren hizkeran galdutako txistukarien oposaketa idatziz mantentzen: «Z bearrean S ta kontrara leku askotan ido-roten da» zioen *EL*$^{1}$-en *utsegiñen zuzenbidea*-n (1802). Ostera, *DotSerm*-en txistukariek bi grafema baino ez dituzte oro har: <ch> (= /tʃ/) eta osterantzeko guztiak adierazten dituen <s>, Mikoletarenean (1653) bezalaxe (6. kap., § xxxx); ordurako gaztelaniak zituen bi txistukari soilen grafema berberak izanik (<c> eta <z>-k jadanik horzkaria adierazten zuten, jakina), badirudi ez dela erabakitzen erraza osterantzeko horiek zein ziren, alegia, <s> : <ś> eta <ts> : <tś> oposaketak galduak ziren ala ez (Ulibarri 2015: 137).

### *5.2.2. Berrikuntzak*

Markinako idazleen *-ija* eta *-uba* bukaerak ditugu ospetsuenak —egiazki *a + a > ia* (*neskia*), *e + a > ia* (*bidia*), *i + a > ija* (*gorrija*), *o + a > ua* (*gurasua*) eta *u + a > uba* (*buruba*)—, baina *-uba* dago, berebat, Larramendiren Azkoitiko sermoian.[25] Ez dago epentesirik *u* ondoan *DotSerm*-en (*burue*), baina bai *i* ondoan, gehienetan *-iya* (*andiye* 'handia') eta batzuetan *-iña* ere (*agoniñe* 'agonia').

Itxuraz berdinak eman arren, joera ezberdinen lekuko dira. Izan ere, idazle jantziek mintzoaren horrelako joerei uko egin ohi zieten, ikusi berri dugunez(§ 5.2.1), salbu eta nori bere hizkeran zuzendu nahi zitzaizkionean: Larramendi azkoitieraz saiatu zen sermoi hartan (*a + a > ea* ere eginez, etab.), Gandararen gutunean bizkaieraz saiatu zen bezala. Ildo bertsutik doaz herri edo bailara baterako idatzi zuten dotrinagile edo sermoigileak, eta Bonaparterentzat hizkera baten lekukotasuna bildu zutenak: Uriartek *ua > uba* ez ezik, *oa > oba* ere badu Orozkoko dotrinan (*Jaincobac* 'Jainkoak'), adibidez. Aitzitik, halako berezitasunak hautatzean markinarrak bizkaiera eta gainerako euskalkien arteko aldea berariaz handitzen ari ziren (§ 8.3): «[Eufonia] ospetsuenak Markinakoak dira, Astarloa jaunak 'Bizkaikoak' deituak, hala berak nola gure idazleek erabiliak, salbu eta Añibarro, Kardaberatz eta Arzadun» dio Zabalak (Zav *Verbo* 54; itzul.).

---

25. Ba omen dago J.K. Etxeberri gipuzkoarraren idazkietan ere, baina bakanak dirudite: cf. *laubak* (Echve *OngiB*), *kristauba* (Echve *Dev*).

Ez dago hortik urruti *f*-ren aurkako jarrera, hau ere Astarloaren ideietan oinarritua (Ast *Disc* 128). Gaztelaniarekin batera sartzen den soinutzat zeukan Mogelek (Mg *PAb* 10-11), baina Añibarroren ustez *f*-ren ordezko *p* (*alper, ipini*) gipuzkoarrek alboko bizkaitarrei kutsatutako hotsa da. Honetan Mogeli fr. Bartolomek (fB *Ic* II, ii) bakarrik jarraitu zion estuki (*piesta, propeta, paltsu…*). Mogelen erabaki hauek, bai *f*-ren aurkakoak, bai eufonien aldekoak, jarraipena izan zuten mende amaierako Donostiako eskolako idazleetan, antzezlanetan herri-hizkera bizia islatu nahirik: adib., Soroaren *Baratzan*-en (*Euskal Erria* 1886) dena da *bestiak, chikiya, bezelakuak, kontuba,* eta abar.

### *5.2.3. Bokal sudurkariak*

Euskara Zaharrean desagertu bide ziren mendebaldeko eremu gehienetik (6. kap. § 3.2.1.3). Dena dela, *DotSerm*-en lekukotasun berantiarrak (c. 1775) /ṋ/ kontsonante sudurkariaren *i* ondoko berrezarpenaren urratsak berreraikitzen laguntzen digu: izan ere, *oi* eta *oipe* ditu, baina *oiñe* 'oina', *sei* eta *seitasun,* baina *seiñe* 'seina, umea', *mi* eta *mirik,* baina *miñe* 'mihia'. Honek adierazten du kontsonante sudurkaria lehenik bokal arteko testuinguruan berrezarri bide zela (*ī*Ṽ > *iṋ*V), eta geroago analogiaz hedatu gainerako testuinguruetara.

### *5.2.4. 'Ozena + txistukaria' taldeak*

'Ozena + txistukaria' taldeetan (*l, n, r + s, z*) egun afrikatuaren alde neutraldu ohi dira txistukariak (*entzun, bertso;* salbuespenez, ik. Mitxelena 1977: § 14.6.f), baina LEMan biak ager daitezke idatziz, afrikatua zein frikaria. Berez, neutraltzea islatzeko arazorik ez zegoen, <ts> eta <tz> grafiak orokortu zirenez gero. Halere, hamaika salbuespen eta zalantza daude, eta ez dira ondo azaldu.

Maileguen grafia nekez aldatzen da, ziurrenik arrazoi etimologikoengatik (§ 5.1.2): adibidez, *pensatu* dago *OEH*-k bildu Hegoaldeko adibide guztietan, eta Iparraldekoetan *pentsatu* Jauretxeren liburutik aurrera soilik (Jaur, 1840). Alderantziz, atzizkia gardena denean (*-tsu, -tza, -tze, -tzaile, -tzat*) afrikatua jasotzeko joera dago. Edonola ere, badirudi LEMaren hasieran behintzat neutraltzea ez zela osoki betea, beharbada *n* ondoren batez ere, Larramendik beti *enzun, eranzun* eta *aranza* idazten baitzuen, besteak beste. Añibarrok *laguntza, chartzat, saltzallea, jaquintsu,* baina *enzun, eranzun, janci, aranza, beranz, arzain, irunsi…* dauka, betiere zalantza batzuekin. Fr. Bartolomek *davilzanac* zein *daviltzanac, jaquinsuba* zein *jaquintsuba,* baina jadanik *dantza* eta *poltsa* bezalakoak ere baditu. Lardizabalek ere euskal ondareko hitz zenbait beti frikariz idazten ditu (*anciña, janci…*). Larramendi, Añibarro, Lardizabal… hiruretan hitzak errepikatzen dira eta, baliteke batzuk *Hirukoitza*-ren eraginpean hedatutako idazkerak izatea, etimologian oinarrituak batik

bat: Larramendiren arabera gazt. *anciano* eus. *anciña*-tik zetorrenez, ez da harritzekoa gehienetan <nc> idaztea (Cb, Mg, VMg, AA, Izt, Lard, Aran…), esaterako.

### *5.2.5. Bustiduraren adierazpena*

Iparraldean 1775etik aurrera nekez aurkitzen da eta XIX. mendean adierazteari uzten zaio, Goihetxe eta besteren baten testuetan izan ezik (Pikabea 1993: 29). Jatorriz eremu zabal batean gertatu despalataltzearekin lotuta dagoela badirudi ere, grafia arau bihurtu zen heinean tentuz epaitu behar lirateke lekukotasunak fonetikaren ikuspegitik.[26]

## 5.3. Morfologia

### *5.3.1. Hegoaldeko literatur euskalkiak*

#### 5.3.1.1. Izen morfologia

**a) Artikulua eta erakusleak**

Pluraleko artikuluaren lehen gradua (*-ok* zaharra) ondo gorde da oro har, baina betiere 1. edo 2. pertsonarekin lotuak diren testuinguruetan: *euskaldunok galduak (…) gindukek* (Lar *Cor*), *beharra ekusten dezuten guziok* (Mb *IArg*), *bekatariok gara eriak* (LE *Serm*), *oneek guztiok* (Añ *LoraS*), *zeuroi, neure entzula maiteoi* (Zav *Serm*), *senide guziok soroan (…) genbiltzala* (Lard), etab. 2. pertsonarekin zailago da aurkitzen, eta adibide batzuetan bereizkuntza falta da: adib., *Gura dozube artu, kristinau errukarri estadu orretan zagozanak…* (Mg *CO*), *Atozte neketan zauten guziak* (AA), *Enzun dozube, neure enzula maitiak* (Astar).

Singularreko 1. eta 2. graduak, aldiz, *au berau* (Cb *Eg* I) eta *ori berori* bezalako esapide fosilduetan baino ez dago erdialdeko hizkeretan, salbu eta deikietan: *Emen engoan i, urde zikin ori* (*BorrB*). Mendebaldean, galdu beharrean, hizkera zenbaitetan izen sintagmaren aurrean ipinitako eta kasu berean jokatutako gradu bereko erakuslearekin indartu da, testu-agerraldiak bakanak badira ere (adibidez, ez da sekula Mogelen lanetan ageri). Idazleek erakusletzat hartu eta, hortaz, bereiz idatzi ohi dute: sing. *onek Sakramentu onek* (Astar), *ori berba ori* (Añ *EL*²), *au seguridade au* (Zav), *oni azkenengo oni* (Ur), etab. Pluralean ere berdin: *oneek berbok, orreek kontuok* (Zav). Dena den, *DotSerm*-en gardenak dira *Riu* arauaren mendeko adibideak: *au garaueu* (5-56), *au doctrine gustiyeu* (18-47). Testu berean, bestalde, egitura berri honetan ere artikulu arkaikoa galduz zihoalako zantzuak daude: *au pasiñoe madariquetue* (45-54; ***madariquetuen*-ren ordez), *onec articulu fedecoac* (1-11; ***fedecooc*-en ordez).

26. Gaiari buruzko ikuspegi orokor baterako, ik. Oñederra (1990: 28-30).

Hegoaldeko goi-nafarreran, *au/gau, ori/gori* oposaketa dago, erakuslea beregain ala determinatzaile den eta horren arabera: *zelebratzen dugun au* vs. *gauza gau, ori baita* vs. *kolore gori* (LE *Serm*).

Artikuluarekiko lehian, *-a* itsatsiak gorabeherak ditu Hegoaldean. Batetik, hitz batzuek galdu dute edo galduz doaz, esan nahi baita, *gaiztakeria andi batean* (1761, Cb *Eg* II 65) bezalakoetatik *zernai gaiztakeri* (1888, Arr *May* 107) bezalakoetara igaroz. Bestetik, *-a* ez duten hitz batzuk baleukate bezala jokatzen dira testu batzuetan, ziurrenik ikasiak izateagatik, hiztegitik hartuak edo:[27] *miraria ikusgarri bat* edo *janaria osasuntsuenak* aurkitu ditugu Añibarrorenean, adibidez, eta Lardizabalenean *atariara, eresiatik* edo *gezia edo fletxa bat*.

**b) Pertsona-izenordainak**

Pertsona-izenordainen sistemak aldaketa dialektalen bat pairatzen du. Mendebaldean, forma arruntak (*ni, i, zu,* etab.) maiz agertzen badira ere, forma indartuak (*neu, eu, zeu,* etab.) testuinguru ez indartuetan ere ager daitezke: *Etorri zan ona, neu etxian ez nenguala* (Mg *PAb*), *biar bada zeubek guraso izan zinaindezalako* (JJMg *BasEsc*), *esaizu zeuk urrengo oraziñoetarik bata edo bestea* (Añ *EL*$^{2}$), *zer ikusi dozu geugan zeure biotza geuri onelan emoteko?* (Zav *Serm*), *Neu baño geijago* (Ur *MarIl*), etab.

*Neu* eta *neroni* erako formen (*zeu/zeroni,* etab.) arteko muga Gipuzkoan kokatu behar da, mendebaldean eta hego-ekialdean *neu* izanik (Lar *AzcSerm, GavS,* Otag), eta ipar-ekialdean *neroni* (Lar, Cb, Mb, etab.). Halere, *neu*-ren eremuko idazleek (AA, Izt, Lard, Aran, etab.) bietakoak txandakatzen dituzte, literatur gipuzkerak oro har *neroni* erako formak hobetsiko dituen seinale. Gerriko segurarrak eta Iztueta zaldibiarrak indartuen forma zaharrenak dituzte oraindik banaka batzuetan, hots, *-r* galdu ez dutenenak: *geur* (Gco II 43), *geurk* (*ib.* I 417), *neur* (Izt *C* 37), *neurk* (*ib.* 30).

*Ene* fosilduta dago: batzuek *ai ene!* (Mb, *BorrB,* Mg, JJMg) edo *ene!* (Izt) interjekzioetan baino ez dute, bestek deikietan bakarrik (Ub, AA, Ur, Echag, Arr, Aran): *jakin egizu, ene alabia…* (Ur *MarIl*); baten batek interjekzioan eta deikietan bietan (Lar, Cb, Lard, Zav), eta are bada behin ere ez darabilenik (Astar). Hegoaldeko goinafarreran (LE), baita agian ekialdeko araberan ere (Gamiz) testuinguru guztietan agertzen da, lapurteran eta bezala. Salbuespen gisa, Añibarrok badaki hortik kanpora erabiltzen: *neure ardiak dazaudaz, ta eneak nazaude* (Añ *LauEv*); Zabalak eta biek, bestalde, inoiz gainerako deklinabide kasuak ere baliatzen dituzte, hala nola *eni* (Añ *EL*$^{2}$) edo *enetzat* (Zav *Fab*), nafarrek bezala (*enegatik* Eliz, *enetako* LE).

27. 1855 arte hiztegiek hitzaren forma mugatua jasotzen dute soilik (§ 6.3).

### c) Deklinabidea

Bizkaera zaharrean ez bezala (6. kap. §3.3.3.1), literatur bizkaierak genitibo singularra (*-aren*) eta plurala (*-en*) bereizten ditu, gainerako euskalkiek bezalaxe. Bereizi behar hau Kardaberatzek ezarri zuen (Cb *JMJ* 53-54, 1764), Kapanagaren dotrinan (1656) oinarriturik, *Aiteen, eta Semeen, eta Espiritu Santuen izenean* bezalako anbiguotasunak saihestu nahiz. Asmo berarekin baliatu bide zuen Olaetxeak Euskara Zaharrean desagertutzat eman litekeen *-aen* arkaikoa (*Abenduaen, Krutzeaen*), baina ez zuen ondorenik izan (cf. §5.2.1 f gipuzkoarren *-aen* arkaismoaz). XIX. mendeko idazleak ahaleginean ari dira, eta batzuetan nahastu egiten dira: Añibarrok *munduen begietan* 'munduaren' (*NekeA*) gisakoak ditu, baita *maitegarriarena* 'maitegarriena' (*ib.*) gisako hiperzuzenketak ere. Aldiz, *DotSerm*-en *-en* dago oraindik (*arboleen*, *bulerren*, mugg. *Pabloen*…). Uriartek *-en* darabil tokian tokiko dotrina batzuetan (Arratia, Arrigorriaga, Gernika, Otxandio) eta *-aren* besteetan (Bermeo, Orozko, Plentzia).

Ablatiboan, mendebaldean oraindik hainbat formaren arteko lehia dago. Bizirik daude *-(r)ik* ablatiboa (mugg. eta pl. *-tarik*) eta *-ti* prosekutiboa (mugg. eta pl. *-tati*), haien oposaketak galduxe badirudi ere. Literatur hizkuntzak ez du auzia konpontzen, eta *-tik* berria ere lehian sartzen da. Dena dela, joerak izan badira idazleetan: sing. *-(r)ik*, pl. *-tarik* (Oe, Añ *EL*[2]), *-ti* eta *-tati* (Mg, fB), *-tik* eta *-tarik* (Añ *EL*[1]). Fr. Bartolomek baditu fosildutako *-(r)ik* bakan batzuk (*ondorik, goxerik arrats…*). Azkenetan aurkitzen dugu Añibarrorengan *-reanik,* denbora-esapideetan baino ez *EL*[1]-en (*ordureanik* 'ordutik', *goxereanik* 'goizetik'). *DotSerm*-en, ablatiboaren eta prosekutiboaren arteko oposaketa gordetzeaz gain, *-rik* eta *-reanik* lehian daude*,* eta are *-rean* arkaikoa bera ere.

Soziatibo pluralean markinarrak ez datoz denak bat: *-kin* darabil fr. Bartolomek (*gorputzakin*), eta gainerakoek *-kaz* (*gorputzakaz*), Uriarte barne.

#### 5.3.1.2. Aditz morfologia

Mendebaldeko idazleek antzina pluralekoak bakarrik izandako 2. pertsonaren adizkiak (6. kap., §3.4.2.a) bietara erabiltzen dituzte, izenordainak bereizita, gutxienez zenbait aditz eta denboratan, hala nola *zu zara* eta *zuek zara, zuk dozu* eta *zuek dozu*. Markinarrek hala *zubek dozu* nola *zubek zara* (batzuetan jadanik *zare*) darabiltzate, bai eta *zubek zagoz,* etab. *DotSerm*-en berdintsu, baina pluraleko forma berriak gehiengoan. Añibarrok *izan*-en bakarrik gorde zuen, nahiz laster *zara* > *zaree* (o *zaré*) aldatuko zuen, *Lora Sorta*-ren *utsegiñeen zuzenbidea*-n (1803) azaldu legez: «*Zu zara* ta *zuek zara* dagoz nasturik: *zu zara*-ri *ra* ganean ifiñi bear jako azento edo erraia bat; *zuek zara*-ri *za* ganean. Beragaiti obeto dator esatea *zuek zaree*». Zabalak ere (Zav *Verbo* 57) arkaismoa txartzat jo zuen.

*a/e* oposaketa, aditza pertsona bikoa edo hirukoa zen markatzen zuena, galdu da *a*-ren alde *egin*-en adizkietan, Mendiburu, Añibarro, Mogel eta fr. Bartolomeren idazkien arabera: (hark hari) *da(g)iola* (ez *de(g)iola*), (hark zuri) *da(g)izula* (ez *de(g)izula*). **edutsi* laguntzailean, berriz, oposaketa ez da galdu: guztiek *deu-* formak dituzte, hala nola (hark niri) *deust,* (hark hari) *deutso,* ez hiperbizkaierak bultzatuko dituen *daust, dautso* erakoak (8. kap., § 10.3).

Garai honetan hasten da *dodaz, dozuz* forma berrien aldeko joera (Cb *CatV,* Oe, Mg beti, besteek tarteka), Zabalak sustatua (Zav *Verbo* 74), nahiz oraindik *ditut* (Añ, JJMg) eta *ditudaz* (Astar, Zav) forma zaharrak hortxe egon. Aldiz, *ditu* edo *dituz* (*ditu* Cb *CatV; dituz* Oe; bietara Añ, Mg, JJMg, Astar, Zav) dago oraindik, ez *dauz*. Añibarrok iraganaldiko *zituan/zituzan* aukeran (*ebazan* oraindik ez da lehian sartu) bigarrena hautatu zuen azkenean; Astarloak eta Zabalak ere *zituzan* nahiago, baina Mogelek eta J.J. Mogelek *zituban*.

Bizirik daude oraindik *-ke* gabeko *egin*-en formak ahaleran (*ezin le(g)i* vs. *ezin le(g)ike* 'ezin lezake'), *-ke*-dunekiko lehian bada ere. Fr. Bartolomek *le(g)i* erakoak darabiltza usu, eta *le(g)ike* erakoak oso bakan. Añibarrok hasieran gabeko formak ditu soilik (*EL¹,* 1802), baina une batetik aurrera *-ke*-dunak ere bai (*GGero*). Are beranduago (*EL²,* 1821), *-ke*-dun geroaldiko agintera erabiliko du (*eikedazu, esaikezu, emoikiozuz*), Zabalak (Zav *Verbo* 100) aditzaz egindako azterketaren eraginez, nonbait: «Lelengoak [*egizu,* etab.] esaten dira gauzea ordu berean egin bearra danean; bigarrenak [*eikedazu,* etab.], barriz, geroagogarrenean egin bearko danean» (*EL²* 7-8). Ahozkoan desagertzear bide zegoen: ez dago *DotSerm*-en eta Astigarraga sermoigile basauriarrak adibide bakarra dauka (Zuloaga 2011b: 262). Bestalde, [indikatiboa + *-(te)ke*] ohikoa da lurralde osoan ustea adierazteko:[28] *dateke* (Mb, Cb, LE, Añ, AA, Lard, Ur (G), Aran, Arr); *duke* (Mb, LE); *zaatekian* (fB)*, zatekean* (Añ, Zav, Izt, Lard, Ur (G), Azc), *zatekian* (Astar, Ur); *eukean* (Añ, Zav, AB), *eukian* (fB), *zukean* (AA, It, Izt, Lard, Arr), *zukeen* (Aran).

Literatur gipuzkeran Beterriko adizkiak eta haien moldeak nagusituz doaz. Gipuzkera zaharreko *deu* desagertu zen *du*-ren mesedetan, eta *due dute*-ren mesedetan. Hasieran *-an,-ala* vs. *-en, -ela* bikoiztasuna bazegoen ere (Ub, AA hark *duan, zuan* / haiek *duen, zuen* vs. Lar, Mb, Cb *duen, zuen / duten, zuten*), *duen/duten* eredua nagusituko da, Mogelek eman arrazoiagatik:

> Zein dan konjugazio obea, nik ez dakit; errazagoa ta garbiagoa dirudi aita Ubillosenak. Baña nola aitatu ditudan beste euskaldunak [Larramendi, Kardaberaz, Mendiburu ta Labort euskerako librugilak] diran izen andikoak, oien gisara nik ere konjugazio esana egin det (Mg *CC* xv-xvi).

---

28. *DotSerm*-en geroaldiko adibide bat (eta bakarra) dagoela dirudi: *seen beguire sagos? Jangoicoac enojaduric descargadu daiqueano vere azotea eta sentenciye condenaciñoecoa?* (Ulibarri 2015: 183).

Forma zehatz horietatik kanpo ñabartasunak badirau: *o* eta *u* bukaeradun adizkietan *e* da nagusi (*dagoen, duen*), baina *a* eta *e* bukaeradunetan ez dago joera garbirik: Kardaberatzek *a* dauka (*dan, diran, lukean*) eta Mendiburu zalantzan dabil (*den, dela, zen,* baina *ziñan, ziran; ditekean* eta *ditekeen, ditzakean* eta *ditzakeen*). XIX. mendean ere ez da finkatuko: cf. *dagoan* (AA, Lard), *dagoen* (Izt, It) eta bietara (Ur, Aran, Arr). Uriartek *ditekean*-en alboan jadanik are *diteken* erako berriak ere baditu.

Gipuzkerazko testuetan bada oraindik **eradun* erroko pluraleko formarik (6. kap., § 3.4.2.e). Larramendik Azpeitian eta Azkoitian kokatu (1745: xxvi) eta baliatu zituen: *diauztan* 'dizkidan', *diauzku* 'dizkigu', *ziauzkan* 'zizkion' (*SermAzc*), *ziauzkula* (*SermAnd*); Mendiburuk ere baditu adibideak: *derezkit, derezkitzu* (*JBDev*), *derezkidate, derezkidatzu* (*OtGai*). Irazustaren dotrinaren bigarren edizioak (1784) *diuzkun* > *dizkigun* aldaketa dakar, literatur gipuzkeraren adizkitegia finkatzen ari zelako zantzu gehiagorekin batera, hala nola *bidi* > *bedi*.

Ohikotasuna adierazten zuen [part. + *joan/eroan*] perifrasi arkaikoa ere topatzen dugu mendebaldean, iragankorra nahiko (*egin daroa* 'egin ohi du', etab; Oe, Mg, Añ, JJMg, fB, *CatLlo,* Zav), eta iragangaitza bakan (*egon doa* 'egon ohi da', etab.; Añ, Zav). Guztira adibide gutxi daude, Zabalaren idatzietan izan ezik: fr. Bartolomek behin baino ez omen du erabiltzen, eta Astarloak behin ere ez. Añibarrok badirudi ikasi egin zuela (cf. Añ *GB* 77-78): ez erabiltzetik (*EL¹*) ondo erabiltzera (*EL²*) igaro zen, bitartean *GGero*-n *daroa* zerabilelarik beti, hala iragankor nola iragangaitzekin (*egin daroa* eta *egon daroa*). *DotSerm*-en, aldiz, ohikotasuna adierazteko bide usuena da.

Aoristo perifrastikoa ia osoki desagertu da: *zekion* 'zitzaion' eta *zekien* 'zitzaien' (B *ekion*, *ekien*) fosildu dira hizkera batzuetan (Lakarra 1996b: 178, 49. oh.), hala mendebaldean (Añ) nola erdialdean (Mb). Zabalaren lekukotasunaren arabera (Zav *Verbo* 56), Plentzian, Getxon eta inguruko herrietan *leguian*, *cenguian*, *nenguian* paradigma bizirik dago, bai eta Laudion, Orozkon, Baranbion eta ere, Laudioko 1858ko dotrina lekuko (*batu eguisen alcarregas*), «…eta esan dezakegu gutxi-asko Bizkai osoan erabiltzen dela» (*ibid.*). *DotSerm*-en nahiko erabilia da, «hain non parerik ez duen bere garaian» (Ulibarri 2015: 199), batez ere datibodunetan (*yaso equiun* 'jaso zekion/zitzaion'), baina ez soilik, eta ezohiko forma aberastasunarekin: *gueratu sin* 'zedin/zen', *bautizedu guinteanean* 'gintezenean/ginenean', *maldecidu eguiyen* 'zegiten/zuten', *eransun senguin* 'zengien/zenuen').

Gainerakoan, oraindik ez da zaila **edin/*ezan* edo *egin*-ekiko baldintzazko protasiak aurkitzea (*albanitza* Mb; *albadedi* Cb, Oe, fB, Ur; *albadaizu* Añ, fB), nahiz jadanik ahalerako formekin lehian (hots, *-(te)ke* atzizkiarekin: *O albanezkike erran…* LE *Serm, O joan albaneiteke…* Añ *LoraS; ekusi albagentzake* AA); ezta denborazko perpausak ere (*idiki dedinean* Lar; *ekus dezanetik* Mb *JBDev; ill dedinian* fB *Ic* II).

Literatur gipuzkeran [- indikatiboa] moduetan *egin* laguntzailea aski hedatua da, Beterriko idazleetaraino, hain zuzen: Larramendik *SermAzc*-n baino ez zuen erabili [aditzoina/part. + *egin*] perifrasia (*ikusi dagigun, uki dagikean*); Mendiburuk [aditzoina + *egin*] dauka, bakanki eta subjuntiboan bakarrik (*barka dagizula*) bada ere; Arruek ugari eta joariago darabil, indikatiboaz beste modu guztietan erabili ere: *eman degiogun* 'diezaiogun'*, ez egiezu ezer egin* 'iezaiezu', *lagun legiket* 'nezake'.

#### 5.3.1.3. Aditz trinkoak

Garai historikoan aditz trinkoak atzeraka badabiltza ere (6. kap., § 3.4.3), iraun zutenak erraz aurkitzen dira testuetan: Mendibururi 24 aditz kontatu zizkion Azkuek (1928b), Añibarrok 27 inguru darabiltza, eta frai Bartolomek 23 bat. Denak edo gehienak bizirik ziren, dudarik ez, baina zeinen aberaski erabiltzen diren gogoan harturik, arrazoizkoa da pentsatzea hein batean bederen erabilera gramatika ikasi izanaren ondorio dela, eta estiloaren aberasgarri, Añibarroren hitzok (Añ *GB* 13; itzul.) iradokitzen dutenez: «Euskaldunei biziki gomendatzen diet amore eman diezaiotela aditz irregularren [i.e., trinkoen] esamolde adierazgarri, lirain eta zorrotzari, oso bakana baita, beste hizkuntzek ez bide dutena».

Testuek berariazko erabilera horren frogak ematen dizkigute. Añibarrok trinko gehiago erabili zituen *EL*$^{2}$-n *EL*$^{1}$-en baino, lehendik zerabiltzanei *erago* 'eragon'*, eratzan* eta *iñardun* 'jardun' erantsirik; alabaina, bistan da *iñardun* ikasi egin zuela, nekez ikasi ere, *diardu* partizipio gisa baitarabil batzuetan: *pazienziaz diardu ta erago beti* (Añ *LoraS* 141), *diardu eben* (*LauEv* 211). Halaber, lehen obretan *erion* forma ohikoenetan bakarrik zerabilen (*dario, zerion*), baina *EL*$^{2}$-n «bizkaitartzeaz» gainera (*zerion* → *erion, z- > ø*), bestelakoak ere aise agertzen dira: *daridala* (cf. *daridan* Mb, *darit* AE), *dariela* (cf. *dariezkan* Mb, *daritenak* Ur), *eriozan* (cf. *zerieztela* Lard). Era berean, Lardizabalek zalantza egiten du *zeutzan* irregularraren (Mb, Ub) eta *zetzaten* modernoaren artean, bigarrena Larregi lapurtarrarenean ikasirik nonbait (He, Lg, Hb, Dv, etab. vs. Ur (G) soilik), eta *entzun*-en orainaldiko adizkiak iraganaldiko testuinguruetan darabiltza: *agintariai, beste guziak dantzutela, esan zien…* (Lard).

### *5.3.2. Literatur lapurteraren bilakaera*

Abiapuntua oso bestelakoa da, jakina, ondo ezarritako eta gertuko tradizio bat dagoenean, kasu honetan lapurtera klasikoa (aurrerantzean LK). Hiru zio aipatu dira LEMko literatur lapurtera —eta batez ere XIX. mendekoa— klasikotik zertan aldentzen den azaltzeko: ekialdeko hizkeren eragina, frantsesarena eta lapurteraren beraren bilakaera

(Pikabea 1993),[29] hirurak *literatur nafar-lapurtera* deitu idazkera berria eratuz joango direnak (§ 8.1).

#### 5.3.2.1. Ekialdeko ezaugarriak

Testuetan LKri arrotz zaizkion ezaugarri zenbait islatzen dira, lehendik ekialderagoko hizkeretan lekukotuak zirenak. Idazle gehienak tradizioari atxikitzen ahalegindu arren, lehengo aldean asko ekialderagokoak izan eta honek bide ematen dio euren mintzoen ezaugarriak neurriren batean itzurtzeari. Beharbada Harrieten gramatika (Ht *Gram,* 1741) da joera honen sortze-testua, Larresoroko mintzoa aski lotsagabeki islatzen baitu Baionako elizbarrutiaren seminarioa bertan ezarri eta berehala,[30] hain zuzen; ildo berekoa litzateke *Kadet* argitaragabea (c. 1750), Hazparne herri garrantzizkoaren mintzoaren ispilu.

LKko *-ei* datibo plurala ekialderagoko *-er* (Gy, Laph) eta *-eri* (Elzb, Arb) formek ordezkatu dute (*gizonei* vs. *gizoner, gizoneri*), zaharrenek (Dh) eta kostaldekoek (Hb, Dv) forma klasikoari eusten badiote ere.

Nor-nori laguntzailean *zait* erako forma klasikoei heltzen diete gehienek, baina ekialderagoko *zaut* erakoak darabiltzate aldizka batzuek (*Kadet,* Dh, Arb, HU). Perifrasi iragankorretan *izan* partizipioa *ukhan*-ek ordezkatu du testu batzuetan (*Kadet,* Dh, Laph, Arb, HU). Halaber, ekialdetik datoz adizkietan *ai* > *i* monoptongatzea (*naiz* > *niz, zaite* > *zite, gaitu* > *gitu*) eta lehen silaban *i* analogikoki hedatzea (*gare* → *gira, natzaio* → *nitzaio*), baina formaren batean *Kadet* (*naiz* eta *niz, gira, zaitut* eta *zitut*), Laphitz (*zite, nitzaizu*) eta Zaldubi (*hiz*) kenduta, denek eutsi zioten usadio klasikoari, Hiriart-Urrutik forma berriak oro hobetsi arte (*niz, zite, gitu, gira, zira, nitzaizu…*).

*-t* eta *-k* bukaeradun aditzoinak hedatzeko ekialdeko joera ere aitzinatzen da (6. kap., § 3.4.1). Esaterako, Aranbillagak (1684) jadanik *lagunt* erabili arren, *lagun* baino ez dago gainerakoetan 1850 arte (He, Lg, Mih, Brtc, Dh), eta gero ere usu (Gy, Hb, Dv, Laph, Jnn, Zby, HU), baina aldizka *lagunt* ere bai (Dv, Laph, Jnn). Ordea, *iduk* errotuago dago (Lg, Mih, Dh, Gy, Hb, Dv, Jnn, Zby).

#### 5.3.2.2. Lapurteraren bilakabidea

Hizkuntzaren beraren bilakabideari egozteko modukoa da Euskara Zaharrean nahiko galdutzat eman genezakeen mugatzaile hurbila (*hauk guziok, haur beror…*) osoki galdu

---

29. Ondoko datu eta azalpen gehientsuak bertatik hartuak dira, berariaz egin ditudan azterketatxo eta interpretazioez gainerako guztiak.

30. Harrieten hirugarren onirizlea Daguerre Larresoroko Seminario Tipiko nagusia da.

izana, bai eta *nork nahi (den)* edo *nori nahi (den)* egitura zaharra lexikalizatu ahala atzizkiak ez galdetzaileari (*nork, nori…*), baizik eta elkartu osoari eranstea (*nornahik, nornahiri…*); berrikuntza hau izenordainon eremu osoan sumatu da (Gamiz arabarra lekuko) eta kostaldekoetan ere badago (Hb, Dv), ekialdeko batzuek pleonasmoa duten bitartean (*nori nahiri* Laph, *nongo nahikoa* HU; 8. kap., § 8.3.3).

Diakroniari zor zaizkio, halaber, izenordain indartuetan gertatu aldaketak; demagun, 1sing. LK *neroni* 'neu', *neronek* 'neuk', *neroni* 'neuri'… paradigma berexia aldatu eta, *neroni* 'neu' mantentzen bada ere (Ht, Mih, Elzb, HU), *nerori* (Gç aldizka; Dh, Dv) eta *nerorri* (Dh, Gy) sortzen dira; aldaketa honek *neroriri* (Dh) zein *nerorriri* (Dh, Dv) datiboak sorrarazi zituen, eta *neronek* ergatiboaren ordez (Lg, Mih, Brtc) oinarri berriko *nerorrek* (aldizka Ch eta Lg); XIX. mendean biak agertzen dira: *neronek* (Dh, Dv, Elzb, Arb, Jnn, HU) zein *nerorrek* (Dh, Hb, Dv).

Duvoisin bere garaikoak baino kontserbatzaileagoa da zenbaitetan: esaterako, [part. + *(h)ari*] progresibozko perifrasia beti adizki iragangaitzaz badarabil ere, garaikideek laguntzailea aditz nagusiaren balentziari egoki diezaiokete: *gure eskuara galtzen ari direnak* → *dutenak* (cf. Mounole 2010). Halaber, ahaleran [aditzoina + *ahal* + **ezan* (iragankor) / **edin* (iragangaitz)] perifrasia darabil (*har ahal dezakegu*), gainerakoek [gerundio edo part. + *ahal* + **edun* (iragankor) / *izan* (iragangaitz)] perifrasi berriak (*hartzen* edo *hartu ahal dugu*) darabiltzaten bitartean. Baliteke Duvoisinek LKko formak nahita gordetzea, bada.

5.3.2.3. FRANTSESAREN ERAGINA

Datiboak hartu zuen garrantzia frantsesari egotzi ohi zaio, eta gardena dirudi aditz zenbaiten balentzia aldaketan, hala nola *zerbaitetan fidatu* (LK, He, Lg, Hb, Arb) → *zerbaiti fidatu* (fr. *se fier à;* Mih, Dh, Gy, Laph), *zerbaitez kasu egin* (LK, Mih) → *zerbaiti kasu egin* (fr. *faire attention à;* Jaur, Laph, Arb, Jnn) edo *zerbaitetan pentsatu* (LK, He) → *zerbaiti* edo *zerbaitera pentsatu* (fr. *penser à; MarIl,* Jaur, *JesBih*).

Itxuraz, destinatiboak ere frantsesaren eraginez ugaldu zituen egitekoak: *zenbait urtez* (LK, Lg) → *zenbait urterentzat* (fr. *pour X ans;* Hb, Laph, Elzb, Jnn, HU), *zerbaitgatik* edo *zerbaiten alde egin* (LK) → *zerbaitentzat egin* (fr. *faire quelque chose pour;* Mih, Dh, *MarIl, JesBih,* Dv, Laph…). Motibatiboa ia osoki baztertu du *Kadet*-en (*-gatik* → *-entzat*), bai eta prolatiboa ere (*-tzat hartu* → *-entzat hartu*).

Frantsesak ezin azaldu, ostera, datiboak postposizioetan hartutako lekua: gaskoiaren kalkoa dateke, *-i buruz* 'norantz' (cf. gask. *de cap ara glèyso,* hitzez hitz 'elizari buruz') hedatuena baita, eta goizenik lekukotua, zehazki zubereraz (*Xarlem,* c. 1800; cf. *OEH,* s.v. *buruz* 2). Pentsa liteke, bada, analogikoki hedatu zela leku postposizio gehiagotara, eta jatorriz ekialdekoa izan zela: *bidean aitzina* (LK, He, Mih, Dv, Arb) → *bideari aitzina*

(Jnn, HU), *mendia gora* (LK, kostaldekoak) → *mendiari gora* (Laph, Arb, Jnn, HU), *zuhaitzaren kontra* (Gy) → *zuhaitzari kontra* (Laph, Arb), etab.

Frantsesaren bidetik azaldu nahi izan dira zenbait aditzen alineazio aldaketak ere; halere, NOR-NORI → NOR-NORK aldaketa behintzat (*eskatu, lagundu*…) Euskal Herri osoan gertatu da jadanik XVIII.aren hasieratik (6. kap., § 3.4.4), eta honek adierazten du prozesua hizkuntzaren barnekoa izan dela. Baratziartek (1784) oraino *lagundu zaio* eta *lagundu du* darabiltza, eta Duhaldek (1809) *eskatu zaio* eta *eskatu dio*.

### 5.4. Sintaxia

Hegoaldean obrak lehen baino handinahiagoak izanik, perpausa luzeago eta konplexuago bilakatzen da, eta oro har baliabide diskurtsiboak ugaltzen dira. Ikusiak ikusirik, egiantzekoa da Iparraldeko tradizioaren ereduak inportatu izana, baina artean ez da azterketarik hori frogatzen lagun dezakeenik.

Ahozkotik idatzira jauzi egiten duten hizkuntzetan ohi bezala, itzultzen diren hizkuntzen —latin, frantses eta gaztelaniaren— joskerek lorratzen bat utziko zuten testuetan. Zati-galderetan latinaren hitz-ordenak kutsatuak dirudite Larramendi, Mendiburu, Kardaberatz eta Ubillosek, lehen lanetan batik bat, galdetzailearen eta aditzaren artean zerbait tartekatzeko joera baitute (Altzibar 1992b: 343-344). Dena dela, Larramendik halako galderak zuzendu egin zizkion Mendibururi Burgosko dotrinan (*Nola zeruetara igo zan?* → *Nola igo zan zeruetara?*) eta Mogelek ere Kardaberatzi bizkaierazko dotrinan (1783).

Izan ere, larramenditarrek bazekiten euskal sintaxia latin edo erromantzearenaz bestelakoa dela, eta hari eutsi beharra aldarrikatu zuten. Larramendik (1745: xl-xli) sermoigileak gaitzetsi zituen sermoiak erdaraz prestatu eta handik hitzez hitz itzultzen zituztelako, eta hitz ordena goraipatu zuen Zarauzko misiolarien bertuteen artean (1754: 291), «euskara argi, ulergarri, garbi eta *ongi ordenatutako batean*» predikatzen zuten eta (itzul.; etzana nirea). Kardaberatzek, itzulpen onaren legeak zehazteaz gain (Cb *EBO* 57-58), euskararen izaera postpositiboa nabarmendu zuen (cf. Larramendi 1745: xl): «… gaztelaniak beti aurretik dakarrena, euskerak azkeneronz beti botatzen duela; eta itzak beren lekuan gaztelaniaren kontra ifintze orretan euskeraren era eder, aire edo txiste guzia dago» (*ibid*.).

Kardaberatzek jaurti zuen lehenik aditza atzean doalako ideia: «Euskarak berez ez du preposiziorik, eta guztiak postposizioak dira, eta egokiena da are aditzak ere atzean jartzea, honela normalean dotoreago ematen baitute» (*Réplica* 10-11; itzul.). Añibarro ere ohartu zen ezen «hala Axularrek nola A. Kardaberatzek aditza perpausaren azkenaldean jartzen dute, (…) eta komeni da horrela egitea, naturalago irteten da eta» (Añ *GB* 14; itzul.). Honek eraginen bat izan zuen garaiko testuetan; adibidez, Olaetxearen dotrinaren

bigarren edizioko (1775) aldaketetan: *fedea da geure salbaziñoen fundamentu prinzipala* → *geure salbaziñoen fundamentu prinzipala fedea da* (Hidalgo 1995). Nolanahi ere, urrun dago BEMan izango den lege zurruna izatetik (8. kap., § 5.1.2).

Literatur hizkuntzan ondo lekukotzen dira hiru arkaismo, baten bat estilema-edo bihurtuta: *Xkin Y,* ezezko perifrasiaren ordena eta erlatibozkoaren kokapena.

*Xkin Y* (edo *Xgaz Y*) koordinazio arkaikoa Hegoaldeko zenbait idazletan aurkitzen da oraindik bakan (Ub, Añ, fB), gehienbat *Xkin/gaz Yren arte-* postposizioan fosilduta: *Pecatarijagaz Jaungoikuaren arteko bakeginak* 'bekatariaren eta Jainkoaren arteko…' (fB *D* 53). Hala ere, ugari baino ugariago agertzen da Iztueta, Lardizabal eta Arruerengan, eta erabilera gero eta aske eta joriagoa da batetik bestera. Iztuetarenean *Xkin Yren arte-* egituraren ugaritasuna baino ez da deigarria. Lardizabalenean (Urgell 1991) edozein genitibok onar lezake, baita atzizki konplexuago baten partaide denean ere: *erregearekin siriar guzien biotzak* 'erregearen eta siriar guzien…' (Lard 240), *zurekin zure semearentzat* 'zu eta zure semearentzat' (*ib.* 224). Arruerenean (Mujika 1991) ergatibo, absolutibo eta datiboak ere onartzen dute eta, hortaz, egiturak aditza eragiten du numero eta pertsonan: *Golorekin kondeak jakingo dute* 'Golok eta kondeak' (*GB* 68), *zurekin zure semea aspaldi hillak ziñatelakoan* 'zu eta zure semea' (*ib.* 125), *berakin beren familiai on egiezu* 'berei eta beren familiei' (*ib.* 31).

Ezezko perifrasiaren ordena zaharra *etorri ez da* erakoa zen (5. kap., § 3.5.1). Ordena hau, *ez da etorri* ordena berriarekin batera bada ere, maiz agertzen da larramenditarretan (Lar, Mb, Cb, Ub, Añ, AA, fB, Lard, Arr…). Larramendik gramatikan (1729: 294; cf. Lard *Gram* 66 ere) bi aukerak baliokidetzat eman zituen, hiru euskalkietan eman ere: *jaten eztet* eta *eztet jaten, ekarri eztot* eta *eztot ekarri, emanen eztut* eta *eztut emanen*. *Ezin-*en kokapena ere ezberdina zen. Larramendik (1729: 199-201) aukera bakarra dakar gramatikan, *ezin eman det* ordenakoa. Añibarrok (*EL*[1]) eta fr. Bartolomek bitara egiten dute: *ekarri ezin dut* eta *ezin ekarri dut;* Larramendirekin bat eginik, Añibarrok *EL*[2]-n bigarrena hobetsiko du; fr. Bartolomek, aldiz, lehenengoa nahiago.

Larramendik erlatibozkoa izenaren aurrean kokatzea hobesten du: «honela eraiki behar da, *dedan eskua miragarria da,* eta ez *esku dedana,* nahiz inoiz honela esaten den» (1729: 276-277; itzul.). Hala ere, Mogel eta Lardizabal ezagunak dira ordena zaharra erabiltzeagatik, eta bestetan ere (Mb, Añ…) aurki daiteke, baita Larramendiren idatzietan ere.

Genitiboa ere oraindik izenaren ondoan halaxe agertzen da sarri; jabego-genitiboa ez da ezinezkoa, baina leku-denborazkoa errazago aurkituko dugu: *Kana Galileakoan, argi egiazkoa*… Ikertutako idazleetan fr. Bartolomek dauka inork baino joera handiagoa: *Ainbeste seme-alaba lotsa txaarreko ta esker txaarreko* (mugagabean), *dantza plazako orreek* (mugaturik).

Galdetzailearen bidezko erlatibozkoa (*zeina den* edo *zeina baita*) irtenbide egokitzat jo zen garai honetan guztian (cf. Larramendi 1729: 279, itzulp.: «…ederki egiten da baita…»), BEMan ez bezala (8. kap., § 5.1.2). Dena dela, frai Bartolomek gutxi erabiltzen du, eta Mendiburuk ere obra batzuetan ez omen du batere. Hegoaldean, idazlearen arabera, adizkiak *-n* atzizkia badu edo ez du (Lardizabalenean ez, kasu), edo batzuetan bakarrik du (Añibarrok *EL*[2]-n osatu zituen *EL*[1]-eko *-n* gabeak). Okerrak oker, badirudi *-n* falta Larramendiren gramatikari egotzi dakiokeela, orainaldiko adibide bi emango eta bat *-n* gabekoa baita: *etxe au, zeñaren zu bide zera jabe* (1729: 273) vs. *sagarrá, ceñac min egin didan* (*ib.* 279; cf. baita Lard *Gram* 59 eta 60).

Halaber, aurreko tradiziotik dator helburuzko perpausak *-tzat* prolatibo atzizkiarekin markatzeko aukera (5. kap., § 3.4.3.2), Ipar eta Hegoan orokorra: *begiak garbitu dizkiogu ikus dezan* edo *dezantzat*.

Hamaika kontu daude aztertzeko. Adibidez, nabaria da *elkar*-en fosiltzeko joera Hegoaldeko testuetan (*OEH,* s.v.). Deklinaezina da batzuetan, batez ere *elkarrekin* edo *alkarregaz*-en ordez: *alkar baturik* (Lar, Añ, Aran). *Elkar* deklinaezin honek aditz argumentu izateari uzten dio: *ez dira alkar ikusten* gisako adibideak idazle bat baino gehiagotan daude (Añ, Mg, Gco, LE, Aran, Arr), nahiz guztietan gutxiengoan oraindik.

### 5.5. Lexikoa

Aro Modernoan lexiko aberastasunaren kezka eta garbizaletasun motaren bat azaldu ziren Europako hizkuntza anitzetan (Burke 2006: 161-180). Euskal Herrian garbizaletasun neurritsu bat hedatu zen, euskal lexikoaren aberastasuna eta emankortasuna ustiatu nahi zituena, baina mailegu zaharrak onarturik eta berriei ateak itxi gabe, BEMan ez bezala (8. kap. § 5.1.2), eta maila guztietako idazleak hartuko dituena. Adierazgarria da Irazustaren dotrina xumearen bigarren edizioa (1784) prestatu zuen isileko zuzentzaileak lehen edizioko (1735) erdarakaden ordez hitz jatorragoak —ez nahitaez mailegu ez direnak— ipini izana: *esklabitude* → *mende, balle* → *leku, pekadore* → *pekatari, guardatu* → *gorde, fiñean* → *azkenean*.

Irizpideak Larramendirenak dira (§ 3.2), baina, praktikari dagokionez, haren *Hiztegi Hirukoitza*-k ez du LEMko lexikoa osoki definitzen, alegia, bertako hitzak erabili ziren ala ezeko dikotomia zaharrak. Egia da eskura izan zuten idazleek bertara jo zutela erdal hitzen ordainak bilatzearren, euskal hitzen idatzizko forma zuzena zein zen jakitearren, sinonimoak ikastearren, etab., edozein hiztegi erabili ohi den bezalaxe. Dena dela, hori bezain garbia da LEMko lexikoak beste zutabe bat ere izan zuela: idazleen euren lanak eta asmoak.

Ez da kasualitatea idazle asko hiztegigile ere izatea (§ 4.2.2). Esan liteke *HH*-ak ase beharrean biztu egin zuela euskal lexikoa ezagutu, garatu eta ezagutzera eman nahia.

Ondorioz, testuetan jatorri askotariko hitzak aurkituko ditugu (§ 5.5.1): norberaren hizkerakoak, bestetakoak, *HH*-koak, liburuetan ikasitakoak eta norberak asmatuak. Hitz berrien neurria, berriz, idatziaren gaiak, hizkuntz erregistroak eta balizko irakurleak baldintzatu zuten (§ 5.5.2).

### *5.5.1. Hitz motak*

5.5.1.1. Hitz berriak

Orduan asmatu ziren —eta lehenengoz erabili— lexiko berezituko hainbat hitz. Jakina, eliz lexikoan ditugu berrikuntzarik ugarienak; ondoko adibideak *eliza*-ren familiak 1745-1880 bitartean izan zituen eransketa garrantzizkoenak dira; *HH*-ko sarrerekiko erkaketak (eskuineko zutabean) egiaztatzen du batzuk bakarrik direla Larramendiren proposamenak:

| Lehen lekukotasunak | *HH* |
|---|---|
| *elizain* (elizai 1824) | *elizai* 'sacristán' |
| *elizate* (1802, elexate 1763) | *eleizaurre, eleizaurke*'ante-iglesia' |
| *elizazale* (elexazale 1816) | *jaierti, jainkoti, jainkotiar, deboto* 'devoto' |
| *elizbarruti* (1880) | *diozesa, barruti* 'diócesis' |
| *elizge* (1785) | *elizke* 'lego, el que no es eclesiástico' |
| *elizgizon* (1747) | *eleiztar, bereter* 'eclesiástico' |
| *elizkari* (elexkari 1821) | *doneskañi, ofrenda 'ofrenda a Dios y a sus santos'* |
| *elizkizun* (1785) | *zeremonia* (euskal etimologiaz) 'ceremonia' |

Eliz lexikoa ez da lantzen den bakarra; adibidez, gramatikaren alorrean hiru hitz zor dizkiogu Larramendiri azken batean: *aditz* (§ 5.5.3), *ahots* (Urgell 2005b) eta *adiera* (cf. *HH*, s.v.). Garai honetakoa da *erakusle* ere (1852), norena eta Arxurena, euskaraz aritu zen gramatikagile bakanetako batena.

Bestalde, *HH*-eko hitz berriak ez dira guztiak xelebreak, aditzera eman denez: *adarbakoitz, adarkada, adierazgarri, adinkide, agintaldi* eta *agurtu* bezalako ehunka hitzek badiraute gaurko euskara jasoan. Hala eta guztiz ere, idazlan bat LEMkoa dela jakiteko biderik errazena bertan *hitz larramenditarrak* aurkitzea da: izen honekin ezagutzen dira Larramendik ohiz kanpoko prozedurak baliatuz egin zituen hitz berriak (§ 3.2), bai eta prozedura berak edo bertsuak baliatuz bestek egindakoak ere. Haietako batzuek aski hedatu ziren LEMan, baina gutxik iraun zuten BEMan jarri zitzaien betoa (§ 5.5.4). Adibidez, Antiaren *Aita San Franzisko Asiskoaren bizitza*-n (c. 1883) *abereki* 'aberekoia', *aipabi* 'dilema', *aitalen* 'patriarka', *antuste* 'handiustea', *asmegi* 'profezia', *auzbakidetegi*

'auzitegia' eta *azalduera* 'azalpena' bezalakoak neke gabe aurkitzen dira, eta horrelatsu garaiko idazlan askotan.

Eratorpen hizki jakin batzuek ere idazle larramenditarra salatzen dute: *-kiro* eta *-ro* (*berezkiro, bereziro* 'bereziki'), *-de* (*betiraunde* 'eternitatea'), *-kida* zein *-kidatu* (*araukida* 'konstituzioa', *donekidatu* 'sagaratu'), *des-* (*desalaitu* 'etsi', *deserri* 'erbestea'), *-ez* (*aldaezkor* 'aldagaitza', *erruez* 'errugabea'), etab.

#### 5.5.1.2. Maileguak

Mogelek (Mg *CC* xiii) pulpitutik entzuten ziren aldrebeskerien honako adibide hau eman zuen: *Abarientoak dira idoloen sierboak, Ira da bizio kapital ta benganzaren orijina puru-purua, Jangoikoaren klemenzia infinitoak asko aborrezitzen duena*. Jarraian bere buruari galdetzen dio: «Zer adituko dute nekazariak, belarriekin enzuenagatik ['entzunagatik' (?)], alako itzkera irutik bat egiña?».

LEMko idazleek oro har garbi daukate erdarakadetatik ihes egin behar dutela. Garai zaharretan lekukotu zirenetako asko zeharo desagertu ziren egile zainduen idatzietatik, hala nola *aberiguatu, aborrezitu, admirable, añaditu* edo *akzidente* (cf. *OEH,* s.vv.). Berebat, orduan hasi zen erabiltzen *Agur Maria* «euskera uts garbian» (Añ *ME* 121), *Ave Maria*-ren ordez, «bada *Ave* latiñari kendua da» (*ibid.*); esapide hau Larramendik ekarri zuen Hegoaldera lapurtera klasikotik (*OEH,* s.v.).

Ongi ikusiak dira, berriz, euskarak aspaldi beretu dituen maileguak, eta areago eliz lexikoari dagozkionak, Larramendik berak esan bezala:

> Euskerari eratxi zaizka gaztelaniatik, latiñetik edo beste hitzkundeetatik hitz asko; baña adituaz ta oituaz euskerakoak bezain ongi aditzen diranak, eta oiek utzi bear eztitugu. Ta bearbada noiz edo berriz obeko da onelakoak usatzea, euskerakoak baño; batez ere eliz gauzetan ta gure arimen salbazioari dagozten egikarietan (1747: 279).

Bi jarrera sortu ziren honi dagokionez. Mogel (Mg *CC* xii) eliz gaietan hitz berriak erabiltzearen kontra zegoen, bai Elizak «beretu ta konsagratuta bezela» dauzkalako eta horregatik «kristau erri guzietako itzkundeetara» igaro direlako, baita haien zehaztasunaz zalantzak zituelako ere. Aitzitik, fr. Bartolome bezalako idazleak (Kardaberatzen antzeko aipu bat egin dut gorago: § 2.2) predikatzen duten garbizaletasunaren eta praktikatzen duten pragmatismoaren arteko kontraesana zuritzera behartuta sentitzen dira:

> Erdeera ez dakijeen euskaldunak, euren etxeetan ta artu-emoneetan biar daben guztia esaten dabee euskeera garbijan. Kristinautzako ikasijan dira euskaldun gaixtuak. Ez da au euskeeriaren erruba, ez bada geuria. Ta ain daukeez ija artubak erdeera edo latin berba batzuk eze, eurakin ez bada, aituten ez dabee ondo dotrinia edo kristinautzako

> erakutsija. Onen bildurra arren, imini ditut erbeste berba batzuk ikasikizuneetan. Bada kristinautzako erakutsijan zuzen aituten emotia leenago da, berbeetan erakustia baino (fB *Ic* I viii-ix).

Batera zein bestera, lehenagoko tradizioan ohi ziren *bataio, komunio, konfesio, konfirmazio, oleazio* edo *penitenzia* bezalako hitzek ohiko jarraitu zuten, nahiz *jauna artu,* kasu, garai honetan ikusten den lehenengoz (Ub, Izt, Ur, Arr; *OEH,* s.v. *jaunartu*).

Gai berriek eskatu ahala ez dute erreparorik mailegu berriak egiteko ere. Hona adierazgarri izan daitezkeen zenbait, hiztegiko letra ezberdinetatik ausaz atereak:[31]

> *alfabeto* (1761), *baioneta* (~1775), *disenteria* (1802), *errebolta* (~1800), *formula* (~1780), *genero* (1761), *kadete* (1847), *kafe* (*1745, ~1800), *kaiman* (~1760), *maionesa* (1864), *makina* (1907, *maxina* 1852), *masoi* (1880), *paga* (*1745, 1858), *pikadore* (1848), *politika* (~1835), *seminario* (1761), *sozialismo* (1884), *zigarro* (*1745, 1808).

Bereizi beharrekoak dira euskarak gaztelaniari egindako mailegutzat hartu zirenak (§ 7.5), *HH*-an euskal etimologia daramatenak. Halakoak arazorik gabe eta maiz erabili zituzten, hain non esan baitaiteke etimologiak zuritu ez ezik, bultzatu ere zuela erabilera:

> *alabanza* (Lar, Cb, Mg, Añ, AA, Ur, It…), *amatu* (Lar, Cb, Ub, Mg, Añ, AA, Ur, Lard…), *bizarro* (Cb, *bizarria* Lar, Cb, LE, Izt), *donzella* (Mb, Cb, Ub, Mg, Añ, AA, fB, Izt…), *estandarte* (AA, Arr, AB), *ira* (*CatBurg,* Cb, LE, Gco, AA, It, Ur…), *manso* (*CatBurg,* Cb, Añ, AA, fB, Lard…), *mantxa* (Cb, *GavS,* LE, Ub, Mg, AA, JJMg…), *modestia* (*CatBurg,* Cb, Mg, Añ, Gco, AA, fB…), *muralla* (Mb, LE, AA, Ur, Alz)…

### 5.5.1.3. Beste euskalkietako hitzak

Larramendik euskalki guztietako hitzak batu zituen hiztegian, nongoak ziren zehaztu gabe, ondare komun hori berreskuratzeko esperantzan (§ 3.2). Mendibururi honela idatzi zion:

> Ongi egin dezu, Nafarroako hitzen batzuek ekartzea, egokiak diranean eta besterik eztanean. Zerren lenbizian ta bat-batean aditzen ezpadira, aurki adituko dira, ta geienak dagoaneko aditzen ere badira; ta ala euskera bide batez edertzen ta ugaritzen da (1747: 279-280).

---

31. Data lehen lekukotasunari dagokio. *Euskal Hiztegia* (*EH* = Sarasola 2007) izaten da gehienetan hitzak datatzeko nire iturria, eta han bezala izarrak (*1745, adib.) erreferentzia hiztegi bat dela adierazten du.

Ez dakigu norainoko arrakasta izan zuen, baina, adibidez, gaur non-nahikotzat joko genukeen *adina* 1745 arte Iparraldean baino ez da aurkitzen, Hegoaldean *edade* dagoen bitartean: *adin edo edade* darabilte Ubillos, Lardizabal eta J.I. Aranak, eurentzat berria zelako seinale (§5.5.2.2). Bide beretik sartu bide ziren *ezinkizun, gogara, gurtu, haste*… eta bost honelako, dela *HH*-ren bidez, dela lapurterazko liburuetatik zuzenean.

Ekialderagoko hitz eta esapideak topatu dira Larramendiren beraren idatzietan (*etsaigo, mokader…*), Lardizabalenean (*amoina, anbatik anbatean…*) eta Antiarenean (*deus, emeki, eri, eskumikatu…*). Añibarrok *Geroko gero*-ren itzulpenean jatorrizko ezin konta ahala hitz eta esapide onartu zituen (Urgell 2001a: §5.3.3), eta batzuk bere beste idazlanetan ere agertzen dira: *biotz-min* (*EL*[1]), *su-biztugarri* (*LoraS*), *maliziati* (*NekeA*), etab. Bestela ere, Axularren hitzak aise aurki daitezke Hegoaldean: *kontrapozoi* (Cb), *sabeldarraio* (Lar), *on behar* (Ub, Añ), *deshonetskeria* (Ub), *debeku* (AA, Lard), etab.

Alderantzizko bidetik joan denik ere bada: *eskuliburu* izenburuan, Añibarrok erabilia (1802) eta Kardaberatzen hil ondoko obra arrakastatsuenean (1826; §4.3.6), mugaz bestaldean berragertzen da zubererazko *Heren-ordreco escu libria*-n (1860), Dartayeten *Guidaria edo escu liburua*-n (1861), etab. Joan-etorrian dabiltzanak ere baditugu: *kontaira* 'narrazioa' Etxeberri Sarakoak erabili zuen lehenik (1712), baina hala forma berria (*kondaira*) nola 'historia' adiera, Euskal Herri osoko testuetan ongi lekukotuak, *HH*-tik datoz.

Ez da aztertu batere literatur gipuzkeraren lexikoak estandarrean izan zuen eragina; baina, agian gaur deigarriagoa delako, frogatu da Iztueta, Jauregi, Lardizabal eta Antia idazle gipuzkoarrek *arerio, gogaikarri, gogaitu, jauzi* 'erori' eta *osterontzeko* bezalako hitzak ez ezik, *gitxi, igarla* (*igarle*-ren ordez), *lora* (*lore*-ren ordez) eta *uri* 'hiria' bezalako aldaerak ere erabili zituztela bizkaiera klasikoaren eraginez (Urgell 1999: lxi-lxix), nonbait.

#### 5.5.1.4. Hitz arruntak

*HH* hitz altxor itzelezkoa da. Artean erlijio gaiak ia bakarrik jorratu izanak aukera gutxi eman zuen eguneroko hitzak idatziz ager zitezen. Adibidez, errazago lekukotzen dira Bibliako animaliak (*lehoi* *1562, *lehoin* 1571; *elefante* *1562, *elefant* 1630) bertokoak baino. Hurrengo lagintxoko hitz guztiak *HH*-an agertzen dira lehenengoz eta euren lehen testu-lekukotasuna ere LEMkoa da:

> *erbiñude* (1858), *ogigaztai* (1804) «comadreja»; *untxi* (1842) «conejo»; *karamarro* (1847) «escarabajo»; *txoarre* (1842), *etxatxori* (1804), *ormatxori* (1804) «gorrión»; *surangilla* (1808) «lagartija»; *inguma* (1808), *mitxeleta* (1896) «mariposa»; *saguxar* (1847) «murciélago»; *igaraba* (1847) «nutria».

Bidenabar, *HH*-n eta testuetan forma berberak egotea ez da kasualitatezkoa aldaerak lekukotzen direnetan; izan ere, nago hiztegi horrek erabaki zuela, erabaki ere, hainbat hitzen forma estandar edo batua, hala nola *antzina*, gazt. *anciano*-rekiko ustezko loturak bideratua (Urgell 2005b; § 4.2.4), baita *armiarma* ere, hitz honen hamaika aldaeratatik (cf. *OEH,* s.v.) horixe baita LEMko idazle jasoek erabilia, hala lapurteraz nola gipuzkeraz (He, Cb, Mg, It, Dv).

### *5.5.2. Idazleen erabilera*

#### 5.5.2.1. Hizkuntz erregistroak

Idazle gehienek erlijio liburuak idazten dituzte jende apalarentzat (§ 4.3.5), eta xede horrekin hizkuntza apal bat erabiltzea hautatzen dute. Erregistro erdi-jaso edo oinarrizko honetan erdarakadak gaitzetsita daude —nahiz idazle batzuk besteak baino nasaiagoak izan—, baina mailegu tradiziozkoak zein beharrezkoak ez; hitz berriak eta beste euskalkietako hitzak tentuz erabiltzea ere zilegi da. Hein bertsuan dabiltza honetan Euskal Herri osoko idazleak.

Leku gutxi zeukaketen hemen Larramendiren proposamen gehienek, beste gai batzuez, maizenik jasoagoez —eta laikoagoez— jarduterakoan erabiltzekoak izaki, astronomia, gramatika, musika, nekazaritza edo osasuna bezalakoez, alegia. Oso adierazgarria da *-tzaile* atzizkiarekin ondo eratutako *HH*-ko hitzen adibide bakan batzuk miatzea, haien premia noiz sortu zen ohartzeko:

> *administratzaile* (1977), *adoratzaile* (1775), *agertzaile* (1800), *agurtzaile* (1913), *altxatzaile* (1891), *amatzaile* (1761), *handitzaile* (1759), *anparatzaile* (~1805), *apaintzaile* (1785), *askatzaile* (1918), *atzipetzaile* (1934), *aurreratzaile* (1887), *azpiratzaile* (1922).

Hitz berrien ordezko maileguak ere ez ziren erabili, aukera faltaz hain zuzen. Gramatika hitzak nolatan agertuko ziren, euskarazko gramatikarik egin ezean? Kardaberatzek gramatikaren zortzi parteak aipatzean (Cb *EBO* 31, 1761), berriz, hantxe daude neologismoak ez ezik dagozkien maileguak ere, haiek oro euskararen historian lehen aldiz, taket artean markatutakoak izan ezik: *ortizena edo pronombrea* [1712], *berbo* [1712] *edo eraskitza, partizipio edo partartzea, posposizioa edo bertematea*…

Nolanahi ere, LEMko idazle guzti-guztiek hitz berriak erabili zituzten, *HH*-koak zein bestelakoak. Añibarrok *EL*[2]-n (1821) egin zituen aldaketek erakusten digute garbizaletasunaren eta ulergarritasunaren artean murgiltzen zirela haietan arduratsuenak, Larramendik aldarrikatutako erdibidearen bila (§ 3.2), nonbait: zenbait mailegu hitz garbiagoez ordezkatu zituen (*bisitatu* → *ikusi, bizio* → *ekandu deunga, inozenzia* →

*bekatu-eza*), baina *betiraunde* bezalako hitz berriren bat edo beste ezabatu egin zuen, *beti(ko) iraun bearra* perifrasiaz ordezkatua, ez hitz berria izateagatik, iluna irizteagatik baizik, antza.

Iparraldeko idazleek ere hitz berriak erabili zituzten, eurenak zein besterenak, tarteka baita *HH*-ekoak ere. Larramenditar ezagunez gain (§ 3.4), Duhalde ustez tradizionalak ere hitz larramenditar nahikotxo erabili zituen (Mujika 2010). Duvoisinen *Laborantzako liburua*-n (1858) bi motatako hitz berriak aurkitu ditut: bereak izan litezkeenak (*bethapen* 'betetzea', *fluxkeria* 'utzikeria', *gogohurridura* 'apaltasuna', *hitzalda* 'dialektoa', etab.) eta *HH*-tik hartuak, beren horretan (*menaslora* «caparrosa») edo bere erara egokituak, hala nola *goihentzia* (*HH goiende* «alteza, altura») eta *eginarteko* (*HH ekiñarteko* «artificial»). *Hitzalda* bera ere eraketaz larramenditarra dugu, *alda aldatu*-ren aditzoina baitu bigarren osagaian (cf. *HH ainalda* 'salneurria'; Urgell 2016).

Idazlanaren izaerak erabakitzen du neologismoen neurria (Sarasola 1986): idazkia jasoago eta hitz berri gehiago. Sermoigileak neurriz jokatu ohi zuten, baina erruz erabili zituzten Iztueta lehen euskal historialariak eta Egiategi lehen euskal filosofoak. Are garbiago: idazle bat eta bera ikusten dugu hitz berriak neurriz edo erruz erabiltzen, idazlanaren izaeraren arabera. Baserritar eta umeentzat itzulitako alegietan (1804) neurriz dabil Bizenta Mogel, eta hitz berriak erruz sartzen ditu Luis de Borbon kardinalaren adierazpenaren itzulpenean (1820; Altzibar 1992a: 339-351): *aosdar* 'batzordekidea', *lelenkari* 'primatua', *zirikari* 'fiskala', etab. Orobatsu, ez dago hitz larramenditarrik Intxausperen zubererazko idazlanetan, ustez behintzat, baina bai Axularren *Geroko gero*-ren berrargitalpenari ipini zion lapurterazko hitzaurrean (1864): *adere* 'araua', *batundetu* 'elkartu', *eskiribakida* 'ortografia'.

Idazlana zein irakurleri zuzentzen zaion, hau ere erabakigarri da, jakina. Uriartek *bula ineffabilis* Arabako euskarara (1864; Knörr 1983) eta literatur gipuzkerara (*EE* 1885) itzuli zuen; bada, araberaz *eguiya* eta *obispo* direnak gipuzkeraz *sinistamen* eta *apaiznagusi* dira, dudarik gabe honetan irakurle jasoago batentzat ari zelako (§ 4.3.5). Bidenabar, honelako ezertxo ere ez dago bizkaieraz, Txomin Agirreren *Auñemendiko lorea* arte (1898), non lehen orrialdetik *eunkida* 'mendea' (1847), *goiendeko* 'bikaina' (*goiende* *1745), *laurka* 'margolana' (*1745), *banaita* 'ezberdintasuna' (*1745), etab. ugari ageri diren.

LEMaren azken aldera langa oso gora doa, Gipuzkoan batez ere, halako hizkera, hitz larramenditarrez betea, ohiko bihurtu baitzen Lore Jokoetan eta *Euskal-Erria* aldizkarian, eta are hizkuntza erdi-ofiziala bilakatu ere, Okendo almirantearen omenez Donostian eraiki zen estatuako *argidotar* hura lekuko. *Donostiako uriak gogoratu naian Mari-ren eginde ura, bere Biltoki nagusian eman zuan diakinde bat* perpausak (Belaustegi, «Zumaia-ko euskal-festak», *EE* 43 (1900): 265) orduko euskaldun jasoek normaltzat

hartzen zuten doinuaren berri ematen digu, non *eginde* 'ekintza', *biltoki* 'antzokia', *diakinde* 'emanaldia', bai eta *aldimaitza* 'batzordea', *araude* 'araudia', *billaldi* 'bilera', *bilkida* 'lehiaketa', *bitezar* 'diploma', *dianagusi* 'lehendakaria', *dieronde* 'errepublika', *dierri* 'nazioa', *moldaera* 'literatur lana' bezalakoak arrunt bilakatu ziren (J. Pagola 1984). Donostiako eskolako antzerkian elkarrizketak herrikoiak dira, baina eszena-argigarriak larramenditarrak: *aurkeztatu* 'antzeztu', *burtina* 'oihala', *egintza* 'ekitaldia', *iruditegi* 'eszenatokia', etab. «Eta nola ez?» zioen Mitxelenak (1984).

Gipuzkoako loratze hari mende bat inguru kentzen dioten Frantziako Iraultza garaiko itzulpen ofizial eta paraofizialetan ere (§ 2.2.2), lexiko politikoko hainbat kontzeptu berriren ordainak aurkitu behar eta honetan ere hitz eta esapide berriak ugari dira: *liburu bisitatzaile* «censeur», *esklabotasuna* «esclavage», *parlamentaren soberanotasuna* «ressort du Parlement», *Heren-estatuaren Bilzar jenerala* «assemblée générale du Tiers-Etat», *herritar* «citoyen», *higoalitatea edo bardintasuna* «égalité», *elektur edo hautatzailea* «électeur», *lanhote* «Brumaire», *izotzte* «Frimaire», *elhurkor* «Nivôse», etab.

5.5.2.2. Ugaritasuna estilo ezaugarri

Idazle zainduek teknika ezberdinak baliatzen dituzte euren idazkiak lexiko ñabarraz hornitzeko, euskararen aberastasuna erakutsi nahiz —orduan hizkuntza jasoen adierazle oso estimatua baitzen (§ 6.5.5.3)—, baita agian irakurleei testua ulertzen laguntzeko edota haien hiztegia aberasteko ere.

LEMko eratorrien ugaritasuna ohiz kanpokoa da aurreko garaietan. Agirre bezalako idazle zaindu baina apal batek usu eta are emankorki erabiltzen dituen atzizkien adibide bana ematea aski bedi hau erakusteko (*apud* F. Altuna 1999):

> Adierazgarriak: *-txo* (*idolotxo*), *-tzar* (*egaztitzar*). Izengileak: *-keria* (*basikeria* 'zikinkeria'), *-tasun* (*apaiztasun*), *-era* (*bereziera* 'banaketa, zatiketa'), *-tze* (*begiratze* 'begirada'), *-dura* (*andidura* 'handitua'), *-mendu* (*idurimendu* 'irudimena') edo *-mentu* (*igerrimentu* 'igarpena'), *-zio* (*ildurazio* 'mortifikazioa'), *-gabe* (*kontugabe* 'utzikeria'), *-garri* (*salsagarri* 'osagarria'); *-ari* (*blasfemari*), *-tzaile* (*maitatzaile*). Izenondogileak: *-ez* (*jakiñez*), *-dun* (*kaltedun* 'kalte egin zaiona'), *-bage* (*ezibage* 'hezigabea'), *-karri* (*urrikarri*), *-tsu* (*baliotsu*); *-tar* (*damaskoar, bazkaldar* 'bazkaltiarra'). Aditzondogileak: *-ki* (*egiaki* 'egiazki'), *-ro* (*zintzoro*), *-kiro* (*lasaikiro*), *-toro* (*gozotoro*).

Ohikoa da, berebat, sinonimoak edo kidekoak pilatzea, bikote, hirukote zein segida luzeagoetan. Testuinguru honetan hedatu zen bi sinonimo *edo*-z lotzeko ohitura, maizenik mailegua eta hitz berria, hala nola *izkunde edo lengoajea* (Cb, G), *gogarte edo meditaziño* (Añ, B), *eginarteko edo artifizial* (Dv, L), *aitzinegüneko edo bezperako* (Ip, Z). Hizkuntza estandarren hasieran ohikoa da baliabide hau, gaztelania alfontsotarrean

kasu, eta ikusi berri dugu, bestalde, itzulpen ofizial frantsesetan (§ 5.5.2.1). Gutxiagotan *eta* ere erabiltzen da, hala nola *agur eta adorazioak* (Lard). Sinonimoak edota beste euskalkietakoak sartzeko ere balio du *edo*-n: *achina edo aurrera* (Añ), *duda edo enura* eta *aitzakiak ta apukoak* (AA), *larunbata edo zapatua* eta *izare edo maindire* (Lard). Inoiz, arruntago, zehatzago edo gardenago denak bestea azaltzen du: *bikiak ta sabelaldi batekoak* (AA), *agortasun edo aurrik-eza* eta *atotsi edo beregana artu* (Lard). Perifrasia ere zilegi da, hala nola *firmamentu edo gañean daukagun estali urdin ori* (Lard).

Ildo beretik datoz «tautologia» deritzen sinonimo elkartuak. Bereziki usuak dira Mendibururen lanetan (*igor-bidaldu, izu-beldurtu, gog-asmoak…*), baina badira baita Añibarro (*antz-irudi, alper-nagi, nai-gura, sor-gortu…*), Lardizabal (*oben-kulpa*) edo Arruerenetan ere (*farra-irrizko, izu-ikara-laborria…*). Tautologia batzuek arrakasta izango dute, *neke-pen* kasu (Mb, Ub, LE, Añ, AA, Lard, Arr…).

Sinonimoetatik haratago doa ugaritasuna, klasikoek *copia verborum* zeritzen horretara. Fr. Bartolomeren adibide bat bildu dugu honen erakusgarri:

> Katiak eten dira, kaltzaidubak bigundu dira, subak oztu dira, otsuak mansotu dira, agintarijak goitu dira, borregubak kansau dira, orijo ta berun urtu gorijak iruntz-preskotu dira, ta laba ixiuak bainu-epeldutu dira, birjinen gorputz garbi osuak ausi ezinda, zatitu ezinda, penau ezinda, galdu ezinda (fB *Ic* II, 93).

### *5.5.3. Lexikoa finkatzen*

Normala baino ez da literatur hizkuntzen hasieran (1968tik aurrera ere horixe gertatu zen) zalantzak izatea hitz egokia zein den eta, zein forma hartu behar duen, zehazki zer esan nahi duen. Adibidez, Larramendik *aditz* (*aditu* + *hitz*) sortu zuen «verbo, en la Filosofía» adierazteko eta gramatikakoari *eraskitz* deitu zion, baina Azkuek (1891) gramatikako adiera esleitu zion *aditz*-i, eta honela lexikalizatu da BEMtik aurrera.

Larramendik hiztegian ahal beste sinonimo bildu zuen (§ 3.2), sinonimo ugaritasuna hizkuntzaren bertute nagusitzat hartua zen garai batean (Karadjounkova 2012). Honegatik beragatik, ez bera ez beste inor ez zen arduratu litezkeen eratorri ugarietatik jakin bat hautatzen: gaur *hasiera* deritzagunari orduan *(h)asiera* deritze gehienek (cf. *HH* ere, s.v. «principio»), baina batzuek batzuetan *(h)asipen, (h)askuntza* edo *(h)aste* ere erabiltzen dituzte; halaber, *agermen* (1804), *agerkera* (1847) eta *agerkari* (1877) sortu ziren, *HH*-ko (s.v. «aparecimiento») *agerinde* (1785) eta *agerpen* (1859) aukerekin batera.

Idazleek ere, nork bere joerak dituzte. Esate baterako, Mendiburuk joera handia zuen ‘ekintza’ adierazten duten atzizkietan *-kunza* erabiltzeko, eta horrela *asercunza, deicunza, galkunza, ibilcunza, zorakunza…* berak beste inor gutxik erabili zituen, edo beste inork ez.

*HH*-eko hitzak eurak erabiltzerakoan halako askatasun bat ere sumatzen da formari dagokionez. Duvoisinek bezalatsu (§ 5.5.2.1), Añibarrok *beste iruditu* 'antzaldatu' *bestiruditu*-ren ordez darabil, *lenjaio* 'premua' *lenijaio*-ren ordez (*lenik* + *jaio*) eta *axe emollea* 'abanikoa' *aize-emallea*-ren ordez; orobat, *Kadet*-en *donegarri* 'benerazioa' dago *donekarri*-ren ordez (agian *done* 'saindua' + *ekarri*) eta *elgardun* 'elkarrekikoa' *elkardun*-en ordez. Bi egileok berdin jokatu dute, beraz, edo norbere euskalkiaren arabera moldatuz (*axe emollea, elgardun*) edo gardenago egin nahiz (*beste iruditu, lenjaio, donegarri*).

#### *5.5.4. LEMko ondare lexikoa*

Egun darabiltzagun ehundaka hitz LEMan sortu ziren edota lehendabizikoz erabili. Haatik, oso hitz larramenditar gutxi heldu dira euskara batuko lexikora: *aditz, antzeztu, berezitu, biztanle, eskutitz, garrantzi* eta baten bat gehiago. Luzaroan mordoiloak eta ulergaitzak izateari egotzi zaio: *auzbakidetegi* edo *aipabi* ez dira ulertzen ez zatitzen errazak, egia; baina, nork zati ditzake gaur *aberri, ikurrin* edo *jaurlaritza* sabindarrak? Nork daki *twitter* edo *ziklogenesi*-k etimologikoki zer esan nahi duten? Gehienbat ez zaigu axola, *zer* diren badakigu eta. Erabilerak egiten ditu hitzak ohiko, natural eta arrunt. Alabaina, XIX. mendeko lexiko jasoan onartuak ziren hitz larramenditar gehienen transmisioa eten egin zen, Aranak eta Azkuek beren hitz berri propioak sortu nahiago izan zuten eta. Guganaino iritsi direnak, bada, itzuri zitzaizkienak baino ez dira (8. kap., § 5.1.2).

## 6. EUSKAL HERRIKO BESTE HIZKUNTZAK

Latinak oraindik ere zenbait esparrutan —eliz kontuetan batez ere— lekua dauka eta ahozkoan lehendik datozen erromantzeek badiraute (6. kap., § 4), nahiz Gipuzkoa iparrekialdeko muturreko gaskoia hil aginean egon XIX. mendean (Orella 2010). Haatik, alde bateko eta besteko hizkuntza ofizialak, frantsesa eta gaztelania, egun batetik bestera nagusitzenago ditugu. Euskara eurekin ukipen estuan dago gero eta leku gehiagotan, egoera komunikatibo gehiagotan eta gizarte maila gehiagotan: esan gabe doa euren eragina etengabe pairatzen zuela, ahoz zein idatziz, baina ezer gutxi erants dakioke elebiduntasunaz (§ 2.2) eta testuetako maileguez esandakoari (§ 5.5.1.2). Hortaz, hemen bi gai berriri helduko diegu: diglosiaren adierazleei eta itzulpengintzari.

### 6.1. Diglosiaren adierazleak

Euskaltzaleek erdara erabiltzen dute euskarari buruz idazteko, bai eta beren arteko harremanetan ere, LEMko eliteetako edozein kidek legetxe (§ 2.2): ohitura honek luzaro iraungo du, salbuespenak salbuespen: esaterako, Euskaltzaindiaren batzarretan

erdara debekatu arte (1956). Elizgizon batzuek latinez ere jardun zuten idatziz LEMaren hasieran (Larramendi, Kardaberatz, Ubillos); garai bertsuan Maisterrek ere (1757: i-xiii) «Illustrissimo ac reverendissimo (…) Francisco de Revol, Episcopo Oleronensi» eskaintza latinez eta euskaraz egin zuen. Osterantzean, nork bere estatuko kultur hizkuntzan jardun zuten, euskararekin batera edo haingabe: idatziz euskaraz osotoro aritu zirenen zerrenda ez bide da oso luzea.

Adibideak hain dira ugari eta nabariak, non salbuespen urriak ematea errazagoa baita. Euskarari buruzko hausnarketa eta eztabaida gutxi aurkituko ditugu euskaraz (§ 4.2.3): Kardaberatzen *Euskeraren berri onak* (1761); Hiribarrenen *Eskaldunak* poema, non euskoiberismoa eta kantabrismoa aldezten diren (Hb *Esk,* 1853: 7-16 eta 23-37) eta Iztuetaren *Kondaira*-ko kideko pasartea (Izt *C,* 1847: 5-10), bai eta *Plauto bascongado*-ren eztabaidan honek egin zuen elebiko idazkia (1829), erdaraz aritu zen fr. Bartolomeri erantzunez (Lakarra & Urgell 1988); grafia dela eta aipatu ditugun *MarIl* (1838) eta Aranaren pasarteak (Aran *SIgn,* 1872: 200-209; § 5.1), eta frantsesa ikasteko Arxuren gramatika (1852, 1868ko edizioan elebiko bihurtua). Berebat, hiztegien metahizkuntza erdara da, guztiak gutxienez elebikoak izateaz gainera.

Euskaltzaleen gutunak ere denak erdaraz eginak dira, Larramendik Mendiburu eta Gandarari bidalitakoak (Altuna & Lakarra 1990), Ulibarrik Erro, Zabala, Mendizabal, Iztueta, eta baten bat gehiagori egindakoak, hauetako batzuen erantzunak (Ulib *passim*), Iturriagak Iztuetari idatzitakoak (Garmendia 1968) eta bakarren bat gehiago alde batera utzita. Mendizabal inprimatzaile tolosarrak —orduko euskaltzale handienetako bat— honela ziotson Ulibarriri (1825-06-04; Ulib 80): «mis ocupaciones no permiten hoy de detenerme á escribir en bascuence y prefiero hacerlo en castellano». Euskaraz idazteak lanak zituen, nonbait.

Paratestuak hobeto aztertu beharko dira erdarak —eta euskarak— euskal liburuetan duen lekua behar bezala ulertzeko. Hitzaurre gehienek *Irakurtzaileari*, *Hitzaurrea* edo *Berbaurrekoa* gisako izenburuak dituzte eta, beraz, euskaraz eginak dira. Alabaina, har dezagun Mogelen *Peru Abarka*-ko «Prólogo al lector vizcaíno» ['Irakurle bizkaitarrarentzako hitzaurrea'] (Mg *PAb* 5-41), «letra gizon handitzat hartuak direnentzat» eginak diren solas horien atarian ipinia, zertarako eta solasen azpian datzan filosofiaren berri emateko: hizkuntza hautua Mogelen beraren hizkuntz gaitasunari zor zaio, ala haren irudiko irakurleek zeukatenari? Baliteke erantzuna Agirrek ematea, berak ere «Prólogo» bat egin baitzuen (AA I, 3-16), eta bertan honela dio: «Hitzaurre hau gaztelaniaz ipini da, bestela katekista askok irakurriko ez dutelakoan» (itzul.). Beraz, idatzi ez ezik, irakurri ere nekez irakurtzen zuten euskaraz orduko jende ikasiek.

Izenburuak ere inoiz edo behin erdara hutsezkoak dira, hala nola Iturriagaren *Diálogos basco-castellanos para las escuelas de primeras letras de Guipúzcoa* (1842) eta

*Fábulas y otras composiciones en verso bascongado* (1842); baldin eta liburua erakargarria egiteko estrategia balitz, erakargarritasuna hizkuntzaz aldatuz zihoalako seinale liteke, *Fábulas* berrargitaratu zenean, LEMaren amaieran, euskal izena eman izana: *Ipuiac eta beste moldaera batzuec* (1884).

XIX. mendean idazkiak ele bitan, zutabe banatan, argitaratzeko halako ohitura bat hartu zen berriro (6. kap., § 2) B. Mogelen artzai-gutuna (1820), Iztuetaren *Carta eguiten diona* (1829) eta Aranaren *San Ignacio* (1872) bederen halaxe irten ziren, euren euskara jasoa oso eta oro ulertuko ez zuen irakurlearentzat, beharbada. Arxuren gramatikaren *hirurgarren agertzia* ere halakoxea da, «euskara ikasi nahi luketen hizkuntzalariak» gogoan zituelarik (Arch *Gram,* 1868: vi).

### 6.2. Itzulpenak eta egokitzapenak

1750-1879 bitartean lehen aldiz argitaratutako liburuen % 46a itzulpenak dira (§ 4.3.2). Baliteke kopurua are handiagoa izatea, zeren eta sermoitegien eta deboziozko beste liburuen iturriak gutxi batzuetan bakarrik aztertu baitira.

Gutxitan dira itzulpen estuak, nahiz salbuespenak izan, hala nola Duhalderen *Birjinia* (1783-1784; Mujika 2010). Gainerakoan, zuzenago liteke egokitzapenez mintzatzea, komunzki balizko irakurleari egokitu nahiz (§ 4.3.5). Mendibururen *Jesusen Bihotzaren Debozioa* moldatuta dago, egileak aitortu bezala: «Liburua ez da guzia nerea, ez eta besterena ere» (Mb *JBDev,* 1747: «Iracurleari»). Lopezek (AR, 1782) jatorrizkoaren laurdena eman zuen, eta hura egokitua: «zeren halaz liburia laburrago baitate eta merkiago; eta hantik jende praubeak ihikiago erosiren, eta aborok probetxaturen». Baratziartek ere (1784) iturriko edukiak laburtu eta erraztu zituen, zeren «bere nekhe izerdiz bizia irabazten dutenentzat luzegi izanen ziren». Giroa halakoxea izan: Iturriagak ere molde herrikoien araberako hizkuntzaz eta metrikaz berregin zituen hala Samaniegoren alegiak nola Virgilioren eglogak (Ruiz Arzalluz 1995).

Itzulpengintza betiere giltzarri izan da —eta da— literatur hizkuntzen eraikitzean. Grezieratik latinera, latinetik alemanera eta erdaratik euskarara itzultzean egia da badagoela jatorrizko obraren halako jaiste, hurbiltze edo errazte bat, baina baita idazten hasi berriak ziren hizkuntzon kulturatze eta goratze bat ere aldi berean.

## 7. HIZKUNTZ IDEIAK ETA EUSKAL IKASKETAK

Garai oparoa da hizkuntzari buruzko gogoeta, lan eta eztabaidetan, batez ere XIX. mendean aitzinatu ahala, maiz Europako hizkuntzalaritzaren teoriak eta kezkak azpian dautzalarik. Euskararen berezitasuna, ikertzaile atzerritar nahikotxo erakartzen dituena, beraren jatorriaren zein dohaien bilaketa, etimologia zaletasuna eta lexikoaren inbentario

osoa biltzeko irrika dirateke gramatikan, lexikografian eta dialektologian egin ziren aurrerapen handien oinarri nagusiak.

## 7.1. Hizkuntz ideiak

### *7.1.1. Euskararen jatorria eta bilakabidea*

Funtsean, Larramendik XVI. mendetik zabaldutako teoria berberak aldeztu zituen: tubalismoa eta kantabrismoa (6. kap., § 5.1). Babeldik haratagoxe ere iritsi zen, euskara Paradisuko aingeruen hizkuntza zatekeela iradokirik (1728: 88), baina agian hiperboletzat baino ez genuke hartu behar. Ildo modernoago batean —Descartesen ildoan— *arrazoiaren hizkuntza* delakoan zegoen, buru on batek asma ditzakeen perfekzio edo dohain guztiak biltzen baititu haren ustez (1728: 91).

XIX. mendean teoria horiek azalpen modernoagoekin osatuko dira. Astarloaren arabera (Ast *Disc,* c. 1805), lehen giza hizkuntza naturala izan zen —animalien orroak bezain naturala— eta perfektua; bere ikerketak perfekzio haiek banan-banan zehaztu zituen eta gero guzti-guztiak euskaran daudela ere erakutsi zuen; beraz, euskara lehen hizkuntza natural hura dugu haren iritzian. Bestalde, Xahok (*Études grammaticales,* 1836) uste zuen euskara hizkuntza unibertsal bilakatzeko behar beste baldintza bazituela (esperantoa 1877 aldera sortuko zen); halaber, uste zuen *eskuara* izena giza hizkuntzaren hastapenari zegokiola, gizakia oraindik *eskuz* mintzatzen zen garaiari (*Histoire primitive,* 1847: 179; Zabaltza 2011).

Euskararen antzinatasunaren eta perfekzioaren aldeko teoriak gudu zientifikoa galduz joango dira: adituek aspaldi ez zuten sinesten Antzinatean Penintsulan hizkuntza bakarra egon zenik, eta Mayansek (1737) ezinezkotzat jo zuen euskarak ordutik hona bere hartan iraun izana; kantabrismoaren teoria ere behin betiko deuseztu zen (Flórez 1786). Haatik, euskalariek orduan gehienek sinesten zituztenak sinesten zituzten —hizkuntza Jainkoak emana dela, hizkuntzak Babelen ugaldu zirela, eta abar—, eta zintzoki uste zuten euskara munduko zaharrenen artean kokatzeko argudio sendoak zituztela, ez bakarrik euren hizkuntza goraipatzeko, baita haren bitartez nazioaren leinargitasuna frogatzeko ere, eta honen argitan ulertu behar dira beren gehiegikeriak. Dena dela, XIX. mendea hasitakoan hizkuntzaren auzia nagusiki auzi politiko bihurtuko zen jadanik: beraz, euskaldunek bereari eutsi zioten luzaro, kritika guztiak —zentzuzkoak izan, maltzurrak izan— eraso eta iraintzat hartuta. Astarloak baserri-giroko oligarkia foruzalearen kide batzuek finantzatu eta bultzatuta lan egiten zuenez (Astorgano 2003), arnasa luzeko lan linguistikoa alde batera utzi eta *Apología*-n (Ast *Apol,* 1803) azkar batean erantzun behar izan zien Joaquín de Traggia-k *Diccionario geográfico histórico de España-n* (1802) egindako baieztapenei, bere aldetik ere zentralismo espainiarraren eraso gogorrak jasanik (Conde 1804 y 1806, Martínez Marina 1805, Llorente 1806-1808).

xviii. mende bukaeratik aurrera hizkuntz ahaidetasunen alorrean ikertzaileen arreta erakarri zuten hizkuntzetako bat da euskara: beste hizkuntzekin edo hizkuntz familiekin erkatzea ohiko bihurtu zen hala hizkuntzalari nola zaleen artean, metodoz edo haingabe, oro har ondorio eskasekin. Gaurdaino iritsi diren euskararen jatorriari buruzko hiru teoria handiak orduan sortuak dira: euskoiberismoa (Humboldt 1821), teoria euskokamitoa (Charencey 1859, Tubino 1876, etab.) eta euskokaukasoarra (Hervás 1784, Fita 1879; ik. Trask 1997); lehentxeago hasiak ziren zelterarekin estekatzen (Bullet 1754-1760, Masdeu 1784, Pallas 1786-1789…; ik. Igartua 2009).

xix. mendean sortua da, orobat, Erroma garaiko Akitaniako idazkunetako hizkuntza euskararekin lotuta dagoelako hipotesia, Aquilles Luchaire (1846-1908) jakitun frantsesaren lanei esker: *Les origines linguistiques de l'Aquitaine* (1877) eta *Étude sur les idiomes Pyrénées de la région française* (1879). Luchaire euskarak gaskoiaren sorreran izan zukeen eraginaz ere ohartu zen. Akitanierak ez zuen interes handirik sortu, nahiz froga garbia izan euskara Antzinatetik Akitaniako hizkuntza izan zela, eta ez Erdi Aroko mugimenduen ondorio: izan ere, Larramendik (1745: xx) uste zuen baskoiek ['nafarrek'] eta kantabroek ['Hiru Probintzietakoek'] vi-vii. mendeen bueltan Pirinioak igaro eta Akitania euskaldundu zutela, Oihenarten iritzian oinarrituta (6. kap., § 5.1).

Artean, Aizkibelek (1856), Schleicher-en ideietatik abiatuta (Gómez 2008a), proposatu zuen euskara antzina hizkuntza monosilabikoa zela eta, hortaz, hitz batek hiru silaba izateari mailegu dela susmatzeko adinakoa dela. Euskararen historiaurreko bilakabideari buruzko lehen teoria modernoa da, agerian denez.

Banakako iradokizun interesgarriak han-hemen kausi daitezke. Añibarrok (Añ *VB* 21) lexikoaren banaketa euskalkien behinolako batasunaren frogatzat zeukan: hala bizkaieraz nola nafar-lapurteraz erabiltzen diren hitz batzuek (*orria* vs. *ost(r)oa, irazarri/irazartu* vs. *esnatu*) gipuzkeraz ere noizbait erabili zirelakoan zegoen, eta beste batzuek are horren zantzuak ere utzi dituztela ohartu zen, hala nola *gura*-k (*logura, azkura*). Liburu faltari egotzi zion dialekto zatiketa, «eta gauza bera gertatuko zitzaion gaztelaniari, bere batasuna liburuek gorde izan ez balute» (*ib.*; itzul.). Ildo bertsutik, Mogelen ustez (Mg *Nom,* 1801) bizkaieraren eta gipuzkeraren arteko aldea ematen duena baino askoz ere txikiagoa da, aditz laguntzaileak funtsean bat baitira, baita sintaxia, deklinabidea eta lexikoaren zati handi bat ere.

### *7.1.2. Euskararen nolakoa*

xix. mendea historizismoaren aroa da eta, hizkuntzaren historiari dagokionez, aldaketa hizkuntzaren berezko ezaugarria dela ezartzen den unea. Lehenago, baina, aldaketa ustelketa, andeatze eta gainbeheratzat zuten adituek. Eredu gisa hizkuntza klasikoak

hartuta, perfektu, araupeko eta aldaezinak zirelakoan, hizkuntza modernoen gramatikak ere landu ziren eta haien perfekzioak goraipatu, norgehiagokan. Akademiak, hain zuzen, goren gradutzat hartutako une horrexetan hizkuntza finkatu eta bere horretan irmo eusteko asmoz sortu ziren.

Euskarak XVIII. mendea heldu eta oraindik horrelakorik ez zeukan, arrazoiak arrazoi. Ez zegoen, bada, hizkuntza basatia, moldakaitza eta txiroa ez zela objektiboki frogatzeko modurik, Larramendik egin bezala haren gramatika (1729) eta hiztegia (1745) aurkeztuaz baizik. Alabaina, horrekin batera oinarri teorikoak ere ezarri beharra zegoen, alegia, euskara zer-nolako hizkuntza den azaldu.

Larramendik eman euskararen perfekzioen adibideak (1728: 87-125) geroko topikoen oinarrian daude: aditz-jokoaren aberastasun eta zehaztasuna, toka eta noka bereiztea, eta abar. Dena den, haren lau ideia nabarmentzekoak dira, bere jokabidean ere izan zuten eraginagatik: arauen ziurtasuna, hitzen egokitasuna, formazko aberastasuna eta aldaezintasuna. Gehienbat orduko ideia arruntak dira, edozeinek baliatuko lituzkeenak; berri-berria dugu, aldiz, eta euskararen egoerari erantzun beharrez sortua, formazko aberastasunaren ideia.

a. Arauen ziurtasuna gramatika tradizionalaren oinarria da, eta erregulartasunaren, hau da, arauek salbuespenik ez izatearen arabera neurtzen da. Larramendik bi adibide eman zituen, deklinabidea eta aditz-joko perifrastikoa, euskaraz beti bat baitira, zein ere den izena edo aditza, latin-erromantzeetan ez bezala.
b. Hitzen egokitasuna formaren eta esanahiaren arteko erlazio naturalean datza («kratilismoa» deritza sineste honi; Genette 1976): aurreko tradiziotik dator (cf. Poza 1587: 30r-v) eta nolanahiko etimologiak egiteko balio du, baina baita analisi morfologikoaren hasikinak ezartzeko ere (§§7.2 eta 7.5).
c. Formazko aberastasuna oso ideia emankorra izan zen lexikoaren esparruan (§3.2): hitz ugaritasunaz daude harro hizkuntza jasoak, baina perfekzio hori halabeharrez erdietsi dute, *per accidens;* aukera izanez gero edozeinek izan dezakeen aberastasun materiala baino ez da. Euskarak are harroago egoteko moduko beste aberastasun mota bat dauka, formazkoa edo berezkoa (1728: 117-119), berez eta bere kasa nahi beste aberasteko aukera ematen diona.
d. Aurreko guztiari darion ideia da euskararen aldaezintasuna, haren «ustelezintasun edo hilezkortasuna» (1745: hitzaurrea, ¶ 5; itzul.): nahiz hizkuntzak aldatzen direla aspalditik ezaguna izan (Aldrete 1606: 176, ezagutu zuen bat aipatzearren), nahiz berak ere jakin denborarekin «hitzak eta letrak» ahaztu egiten direla (1728: 121), beti jokatu zuen —eta halaxe egingo dute ondorengoek ere— euskara funtsean sortu zenetik bat eta bera bailitzan:

> …euskarak, berrikuntzak eta aldaketak ukitu gabea, eta sasiko eraginik izan gabea, bere antzinako garbitasun eta edertasuna hain osoki gorde ditu, ezen Espainiako lehen populatzaileak (den hura Tubal, edo den Tarsis) gipuzkoarrei entzungo balie, ulertuko bailieke hiztegirik eta interpreterik gabe, bere hizkuntza ahaztua ez balu, behintzat (1745: hitzaurrea, ¶ 5; itzul.).

Astarloak (Gómez 2007) hiru hatsarretan laburbildu zituen hizkuntza perfektuak izan beharrak: egokitasuna, ekonomia eta eufonia. *Egokitasuna* Larramendiren zentzu berean ulertzen zuen, baina berak euskal silabek eta are hotsek ere esanahi naturala dutela aldeztu zuen, Court de Gébelin-en ideiei jarraiki. *Ekonomia* behar den guztia adierazteko ahalik eta baliabide formal gutxien erabiltzean datza; ildo honetatik, oposaketen osagaietako batean egon ohi den hizkirik ezaz —«zero marka»— (ø absolutiboa vs. *-k* ergatiboa, adib.) ohartzen lehena izan zen. *Eufonia* ahoskera zuzena da, eta mintzoaren organo zilegi bakarrari dagokio, ahoari alegia, sudur-eztarrietan ahoskatzen diren hotsak gaitzesgarri diren bitartean (*v* eta *j,* besteak beste; cf. lehenago Larramendi 1728: 89); bide honetatik, silaba mailako eufonia arauak ematen ere lehena izan zen, eta silaben konbinaketak murriztapen fonotaktikoen pean jartzen.

Ondorengo egileak ez dira hain ezagunak alde honetatik, baina oro har esan liteke euskararen antzinatasunaz, aldaezintasunaz eta perfekzioez Larramendi eta Astarloarengan aurkitu ditugun oinarrizko sinesteek bere hartan dirautela garai osoan zehar, eta perfekzioen bilaketa izan dela, aldez bederen ikusi dugun bezala, euskal gramatikaren ezagutzan aurrera egiteko pizgarri nagusia.

### 7.2. Gramatikagintza

XIX. menderaino euskal gramatika latin gramatikaren ereduaren gainean eraikitzen da, hainbat hizkuntzatan bezalaxe (Auroux 1994: 82-85). Honek balio teoriko, metodologiko eta pedagogiko handia izan zuen (*ib.* 129-135), bai eta balio sinbolikoa ere, bi hizkuntzek kategoria berak edo bertsuak zituztela frogatzen baitzuen; baina, aldi berean, euskalariek zailtasunak izan zituzten horren arabera euskal gramatikaren berezitasunak azaltzeko, eta batzuetan haietaz ohartzeko ere bai.

Larramendiren gramatika (1729; Gómez 1992) bete-betean sartzen da multzo horretan: adibidez, euskal deklinabidea latinaren sei kasuen arabera azaldu beharrez, nominatiboaren parean hala absolutiboa nola ergatiboa eman zituen, eta ablatiboaren parean soziatiboa, *gabe* postposizioa, motibatiboa eta inesiboa (*nerekin, nigabe, nigatik, nigan;* antzera suomieraz ere, besteak beste: cf. Auroux 1994: 133). Dena dela, ez da beti horrela, baizik eta ia ezerezetik abiatuta euskararen deskribapen aski zuzentzat dugu (§ 3.1).

Mende batetik besterako igarobidean eredu klasikoa gainditzen ahalegindu ziren bi izen handi ditugu: Astarloa eta Humboldt (Laka 1992; Gómez 2007, 2008b). Astarloak gramatika orokor eta filosofikoaren barruan, eta zehatzago filosofia sentsualistarenean lan egin zuen, eta alde handiz garai honetako hizkuntzalari euskaldun interesgarriena da: hots naturalen teoria (§ 7.1.2) oinarritzeko, euskal hotsen deskribapen fin batez gain, euskararen analisi morfologiko zehatza egin behar izan zuen, eta horrela hainbat hizki identifikatu zituen. Aditz moduei buruzko haren ikuspegia ere berritzailea da, eta SOV ordenaz ohartzen lehena dugu. Gaur egun «hizkuntz unibertsalak» deituko genituzkeen horiekiko haren interesa ere —Hervás-en hizkuntz datu bilduma erraldoian oinarritua (*Catálogo de las lenguas,* 1800-1805)— ez da makala. Humboldtek Astarloaren lanak oso kontuan izan zituen; bere aldetik, atzerritar jakitunen zerrenda etengabe bati eman zion hasiera bere izen handiaz, eta euskara hizkuntzalaritza orokorraren gogoetekin lotu. Euren eragina izan zitekeena baino txikiagoa izan zen, biek ala biek lan garrantzizkoenak argitaragabe utzi baitzituzten, batzuk eskuzko kopiatan zabaldu baziren ere (Humboldten lanez, ik. orain Hurch 2012).

xix. mendearen lehen erdian Iparraldean sortzen dira lan ñabarrenak eta ideia berritzaileenak (Darrigol, Abadia, Xaho, Intxauspe…), gramatika orokorraren ildotik eta honen analisi logikazaleen pean (Gómez 2008b). Aipagarriena Darrigol (1827) bide dugu; besteak beste, irizpide morfologikoan oinarrituta erabaki zuen deklinabide atzizki bakoitzari kasu bat dagokiola. Testuinguru honetan sortu zen aditz bakarraren teoria ospetsua (Gómez 2002); aldeak alde, teoria honen aldeko guztiek uste zuten benetako aditz bakar bat dagoela, gainerakoak [izenkia + *izan*/**edun*] egituratik sortuak direla eta aditz trinkoak izenki horiek benetako aditzarekin bat egitetik datozela. Tarte berean, Hegoaldeko gramatikak oro har bakunak dira, didaktikoak, eta osoki edo zatika Larramendirenaren zordunak (Añibarro, Lardizabal…). Ezer bereiztekotan, Zabalaren aditzari buruzkoa (1848), Astarloaren ildokoa, baina bere baitarik asko dakarrena (ik. Gómez 2008c).

Bigarren erdian ekarpen nagusiak atzerritarrei zor zaizkie (Bonaparte, Vinson, van Eys…; Gómez 2007), orduan puri-purian zeuden hainbat ikerlerro —gramatika konparatzailea eta dialektologia nagusiki— euskalaritzan sartu baitzituzten. Hiruretan van Eys soilik dugu gramatikagile (1865, 1879), baina beren eztabaidek alorra arnasberritu zuten. Bonaparte euskal gramatika tradizioari atxiki ohi zitzaion; Vinson eta van Eys, aldiz, oso kritikoak ziren, mitoz eta okerrez betea zegoelakoan, eta euskara Europako estandarren arabera aztertzen saiatu ziren. Van Eys hizkuntzalaria zen, euskal gramatikagile gehienak ez bezala, eta hori nabaritu egiten da egin zituen analisietan (Sarasola 1989); dena den, beraren heterodoxia ezin ikusi zuten jarrera tradizionalagokoek (Bonaparte, Duvoisin, Intxauspe; 8. kap., § 5.2.1), eta honegatik haren lana gutxietsia

izan da. Bietan polemikoena Vinson dugu: euskoiberismoa ukatzeaz gain, Schleicher-en hizkuntzalaritza naturalistaren bidetik baieztatu zuen euskara ez dela gizarte modernoan erabiltzeko gai (8. kap., § 5.1.3).

LEMko gramatiketan atal hedatu eta landuena morfo-sintaxiari dagokio, eta horren barnean aditzari. Fonologiari buruzko berri zenbait Oñederrak (1989) batu eta iruzkindu ditu; deklinabideari buruzkoak Alberdi Larizgoitiak (1989).

### 7.3. Hiztegigintza

*Hiztegi Hirukoitza* (1745) lehen hiztegi orokor argitaratua da, eta handiena 1850 arte: gaztelaniaz 43.000 bat sarrera ditu, eta euskaraz beharbada 40.000 bat lema, aurreko lan handienetatik urrun: Pouvreauk 8.100 bat, Urtek 10.000 bat).

Haren eragina erabatekoa izan zen. Haatik, hainbat kontutan LEMko hiztegiak *HH* —eta aurreko hiztegi guztiak oro har— ez bezalakoak dira (Urgell 2002a). Lehenik, bi mendetan zehar (1562-1745) ez zen izan tradizio lexikografikorik ezartzerik, hiztegi guztiak argitaragabe gelditu zirenez gero. Alde honetatik, «Larramendiren paradigmaz» hitz egin dezakegu (Sarasola 1998), Azkuerena arte (1905) *HH* edozein hiztegiren nahitaezko erreferente izan baitzen: zenbaitetan (Añ, NoviaS, Fabré, Aizk…) ekarria % 70-90 bitartekoa da; zorren artean, esan dezadan badaezpada, hitz berriak ez ezik, denetariko hitzak daude: «arruntak», euskalki guztietakoak, aldaerak, eta abar.

Bigarrenik, *HH* agertu orduko euskara-erdara hiztegi handi baten beharra sortu zen: Larramendik berak halako bat hasi zuen (*Diccionario vasco-castellano,* c. 1760; Altuna 1967). Hiztegi handi guztiek euskara dute iturri-hizkuntza, baita txiki gehienek ere. Lanari hasiera emateko ohiko bidea, bada, *HH* atzekoz aurrera jartzea zen, gero honi bestelako gaiak erantsi edo ez: horrelaxe eginak dira Duvoisinenaz beste guztiak (Aizpitarte, Aizk, H, NoviaS).

Hiztegiaren itxura ere hamaika alderditan aldatu zen XIX. mendearen erdialdetik aurrera, Iparraldeko hiztegigile biren eraginez: Xaho (1855-1856) eta Salaberri Ibarlakoa (*VocBN* 1856), noiz Europako teknika berriak bere eginik, noiz euskararen berezko premiek hartaraturik (xehetasun gehiagotarako, ik. Urgell 2002c). Hegoaldean Manterolak (*VocCB,* 1880) erabiliko ditu lehenengoz berrikuntza horietako batzuk.

Larramendik berariaz hitzen etorkia ez zehaztea erabaki bazuen ere (§ 3.2), ia ondorengo guztiek alderantzizko bidetik jo zuten. Euskalki markak beti edo ia beti ematen dituzte batzuek (Añ, vEys, Mant, H), eta aldizka besteek (Izt, Xaho, Dv, Aizk, Lcq). Marka orokorrak izan ohi dira (euskalki nagusiak) eta ardura belarriz ebatziak edo iturriaren araberakoak (demagun, *HH* = gipuzkera) eta, beraz, tentuz baino ezin zaie balio dialektologikorik eman.

Testuetara jotzea nomenklatura hazteko bide usua da. Hiztegi handiek (Aizk, H, Dv) adibideak ugari dakartzate, batez ere literaturakoak, nahiz egokituak izan (H) edo batzuetan erreferentziara mugatu (Aizk). Txikiagoetan ere badaude adibideak, ahozkoak (*VocBN*), asmatuak (Hb) edo irakurriak (vEys). Iturriak zintzo aitortu ohi dira, eskuarki laburduren bitartez (vEys, H, Dv, Aizk…).

## 7.4. Dialektologia

### *7.4.1. Hastapenak*

Ez da batere ezaguna, ezta gure artean ere, Larramendi dialektologia modernoaren aurrekarietako bat datekeela. Europan XVIII. mendean han-hemen egingo den bezala, baina dakigularik inork baino goizago, ahozko materialak batzeari ekin zion hiztegia osatze aldera, eta galdeketan erabilitako metodoez deskribapen zehatz bat utzi zuen (1745: lii-liv).

Euskalkiak sailkatzeaz gainera, beren ezberdintasunak azaldu zituen, bai eta batzuetan ezaugarrien muga geografikoak ere (1729: 12-13; 1745: xxiv-xxx, eta guztiz 1754: 295-302). Funtsean, hiru dialekto nagusitan banatu zuen euskara (1745: xxvii): gipuzkera, bizkaiera, eta nafarrera edo lapurtera —uste zuen Arabako euskara oro har bizkaiera zela eta, arrazoi historikoengatik, «Frantziako euskara» nafarrera zela (*ibid.;* §7.1.1)—, nahiz onartu haien azpian beste batzuk badirela, *menores* deritzenak: hauen artean, *Corografía*-n (1754: 295-300) zuberera ere bereizi eta aipatu zuen, *Othoitce eta cantica espiritualac* liburuari esker (Pau, 1748). Ondokoek sailkapen hirukoitz hau jakintzat emango dute —baita Humboldtek ere (Humb *Mitrid* 280-282, 1817)—, Bonaparte arte. Mogelek (Mg *Hist* 220) *egiazko euskalkiak* zeritzen eta Léclusek (1826: 106) esplizituki behenafarrera eta zuberera lapurteraren adartzat jo zituen.

Hurrengo lanek garbiki adierazten dute zer-nolako lilura sortu zuen aldakortasunak, aberastasuntzat hartuta eta ez arazotzat, Larramendiren ikuspegiari helduta (1745: xiv). Arakistainek berehala (Aq, 1746) hitz zerrenda bat bidali zion, besteak beste Erronkariko herrian entzundako «euskal hitz apartak» bilduta. Kardaberatzek (Cb *CatV* 112-114, 1762?) sartaldeko bizkaiera eta sortaldekoa bereizi zituen. Añibarro (Añ, c. 1804) hiztegian hitzen jatorri dialektala markatzen lehena da (§7.3), Larramendiren sailkapenaren arabera (b., g., n., gehi c. 'orokorra'), eta gramatikan *Imposible Vencido*-n aditz-jokoari buruz bildutakoa bizkaiera eta goi-nafarreraren datuez osatu zuen. Zabalak (Zav *Verbo,* 1848) bizkaieraren lau aldaki bereizi zituen: Markinakoa, Arratiakoa, Erdialdekoa eta Orozkokoa (Zuazo 1988b); bere oharrak ezinutzizkoak dira forma jakingarri zenbaiten orduko hedadura ezagutzeko, hala nola aoristo perifrastikoaren, iraganaldiko *-n*-aren galeraren edo aditz-izenaren markena.

### *7.4.2. Bonaparteren paradigma aldaketa*

Bonaparteren lanak mugarri izan ziren, bai kalitatean, bai kantitatean (Yrizar 1981; Pagola 1991; Camino 2009). Bospasei bidaiatan (1856-1869) eta tokiko hainbat laguntzaileri esker, euskalkiak, azpieuskalkiak eta tokian tokiko hizkerak sailkatu zituen eta lehen mapa dialektologikoa eratu, euskaldun ziren eta ez ziren lurraldeak ere bereizirik. Berriemaileen ahotik datuak biltzeaz gain, itzulpen andana bat ere eragin zuen euskalki eta hizkera ezberdinetara, gehienak Bibliako pasarteak eta dotrinak, edizioan parez pare jarrita erkatzeko moduan, Coquebert de Montbret-en metodologiari jarraiki. Itzulpenak landa-lanean jasotako datuekin eta laguntzaileei eskatutakoekin erkatzen eta maiz zuzendu ere zuzentzen zituen. Berari zor diogu lehen aldiz hainbat hizkera bakan deskribatu izana, eta hamaika testu garrantzizko galduko ziren berak bildu izan ez balitu. Bana-banakotzat jo zituen idazlanak ere argitaratu zituen (*FPrBN,* It *Dial,* LE eta LE *Kop,* etc.; cf. Arana Martija 1990: 195, 615, 679 y 680), Salaberriren behenafarrerazko hiztegia barne (*VocBN,* 1856) .

Batez ere aditz morfologian eta lexikoan oinarriturik, lau sailkapen zirriborro egin zituen (1861, 1864-1865, 1866), *Le verbe basque en tableaux*-en (1869) aldaketa gutxirekin azkeneraino ontzat eman zuen hura lortu arte. Honetan zortzi euskalki, 25 azpieuskalki eta 50 hizkera bereizi zituen, eta euskalkiak hiru talde nagusitan bildu: A (bizkaiera), B (gipuzkera, iparraldeko eta hegoaldeko goinafarrerak eta lapurtera) eta C (zuberera, ekialdeko behenafarrera eta mendebaldekoa). Sailkapena *Carte de sept provinces basques mostrant la délimitation actuelle de l'euscara et sa division en dialectes, sous dialectes et variétés* (1863) mapan islatu zuen.[32]

Orduan ohi zenez, bere lanean tradizio idatziak ere pisu handia izan zuen: «Literatur euskalkietarako, hau da, gipuzkera, bizkaiera, lapurtera eta zubererarako, ez zaio ahozko hizkuntzari jarraitu behar, baizik eta liburuetakoari, idazle moderno onen euskarari» (1862-02-19ko gutuna; Urquijo 1910: 237; itzul.). Hartara, lau literatur euskalki onartu —bizkaiera (Markinakoa), gipuzkera (Beterrikoa), lapurtera (kostaldekoa) eta zuberera (§ 7)— eta argitalpenetan arreta berezia eskaini zien, definitzeko eta normaltzeko asmoarekin. Honek eman zion bide, bistan denez, Campionen *Gramática de los cuatro dialectos literarios de la lengua euskara* (1884) erraldoiari.

Bonaparteren egin handiek badituzte alderdi ilunak ere, bere emaitzak eta areago bestek egindako interpretazioak tentuz begirarazi behar lizkiguketenak. Batetik, hizkerak sailkatzeko irizpideak gutxi izan, eta horiek ere maiz ez zituen behar bezala argitu. Bestetik, funtsean euskalkiak berez eta jatorriz aratzak —bestek kutsatu gabeak— zirelakoan zegoen eta, beraz, idatziz ere aratzak behar zirelakoan (cf., adibidez,

32. Maparen data zalantzazkoa da (ik. Arana Martija 1990: 185. zb.).

goinafarrerari buruzko egitasmoa: 1861-07-22ko gutuna; Urquijo 1908: 219-220). Alde honetatik, ez dirudi itzulpenetan aldaeren artean hautatzerakoan erabili zituen metodoak beti ortodoxoak izan zirenik (Camino & Gómez 1992, Urgell 2000b).

Nolanahi ere, hain izan zen handia sortu zuen miresmena, non haren ondorioek ia kritikarik gabe gaur arte iraun duten. Ondokoen errua da, ostera, euskalki mapa hura betierekotzat (eta euskara geografikoki ere aldaezintzat) hartu izana, nahiz berak garbi *la délimitation actuelle* islatu nahi izan zuen (8. kap., § 9.2).

### *7.4.3. Aranaren sailkapena*

Jose Ignazio Aranak sailkapen hirukoitz bat aurkeztu zuen (1872, Aran *SIgn* 201-202), Arabako euskaran egiten duen banaketagatik txit jakingarria: *Eskuara sortaldekoa* (Lapurdi, Zuberoa eta Nafarroa Beherea), *Euskara sartaldekoa* (Deba ibaitik hasita Bizkai osoa eta Arabako zenbait herri) eta *Euskera erdikoa edo hegoaldekoa* (Gipuzkoa, Nafarroa Garaia eta Arabaren parte bat).

## 7.5. **Etimologiagintza**

Luzaroan onomastika bakarrik landu zen, tubalismoak iragartzen zituen ustezko erlazio historiko-geografikoak frogatzea helburu. Salbuespen nagusi bi daude: Pozak (1587) *eguzkia, irargia* eta *eriotzea* bezalako hitz bakan batzuk analizatu zituen, euskararen *egokitasuna* frogatu nahiz (§ 7.1.2), eta Oihenartek (1656) euskal mailegutzat zituen gaztelaniazko 135 hitz bildu eta azaldu zituen (6. kap., § 5.4). Hiru ildo hauek guztiak berrartu zituen Larramendik, baina berarekin lanak batik bat euskararen beraren miaketara bideratu ziren.

Onomastika jatorrizko euskararen aztarnen bila aztertu zuen; hortik, leku-izenak, deiturak eta haietan bildutako erroak hiztegian hitz arruntak bailiran onartu zituen, eta atzizki ihartu zenbait emankor bihurtu (§ 3.2; Urgell 2008b).

Oihenarten ildoan gaztelaniaren lexiko osoa arakatu zuen, 2.000 etimologia baino gehiago euskararen alde ebatzirik, eta saio batzuk egin zituen greziera, latin, frantses eta italieran ere (1745: xiv-xxiv). Emaitzak *Diccionario de Autoridades*-ekoekin erkatu eta ondorio estatistikoak atera zituen (1745: cxviii-cxxv). Lan hau ez zen alferrikakoa suertatu (Urgell 2008a): alde batetik, hainbat mailegu euskal lexikoan eskubide osoz sartzeko modua eman zion, zorrak hartzeko bihurtuz (Mitxelena 1983: 471; § 5.5.1.2); hala bada, adibidez, *amatu* 'maitatu' *ama*-tik letorke: «*Amar,* euskarazko *amá*-tik hartu zen: zeren [lat.] *amare*-k zaletasun eta maitasun berezi bat adierazten baitu (…). Bada, maitasun berezi hori amei dagokie bereziki, eta euskaraz *amá* izanik, horrela maitatzea *amá, amatu*» (itzul.). Beste aldetik, egun ere aipatu ohi dira euskarak gaztelaniari utzitako

ondarearen barruan bere hitz batzuk, hala nola *abarca, chaparro, chico, izquierda, modorro, pizarra* eta beste (cf. Gorrotxategi 2012), ziurrenik tarteko iturri baten bitartez. Esan beharrik ez, alderantzizko norabidean ulertu behar dira gaur Larramendiren proposamen gehienak: dena dela, azpimarra dezadan gauza izan zela nabarmenak ez diren kognatuak ere elkarrekin lotzeko, hala nola gazt. *acordar* eta eus. *kordea,* gazt. *abezarse* eta eus. *bezero* edo gazt. *abuharse* eta eus. *buiatu*.

Pozarena dugu, baina, LEMko ildorik emankorrena. Hitzek beren baitan esanahi ezkutua daukatela pentsatzetik berez bezala dator zatitu beharra esanahi hura argituko duten osagaien bila. Hitzak nolanahi zatitu zituzten batzuetan, baina bestetan analogiak hainbat hizki igartzen lagundu zien Larramendi, Astarloa, Novia de Salcedo eta besteri; esan daiteke, beraz, etimologiagintza euskal morfologiaren abiapuntua izan zela.

Hotsei dagokienez, paronimian (hitzen antzekotasunean) oinarritzen da etimologiagintza klasikoa. Esanahia etimologiaren gune izanik, gehienetan erkatutako formen arteko aldeak azaldu beharrik ez zuten ordukoek, baina, hala ere, hots-egokitasun zenbait bazirela ohartzeko gauza izan zen Larramendi, *Diccionario de Autoridades*-en eta Oihenartengan ikasitako bidetik. Zuberotarrak gaztelaniaren eta euskararen arteko egokitasun zenbait eta euskara barruko gertakari fonetiko zenbait nabarmendu zituen, hala nola *l* eta *r* arteko erlazioa (*Álava* vs. *Araba*) eta txistukari ondoko ahoskabetzea (*gara* vs. *ezkara*), eta Larramendi ere bere kabuz *o/a* eta *e/a* txandakatzeaz (*arto / arta-, alde / alda-*) jabetu zen, besteak beste. Lehen intuizio hauetan sustraituko dira XIX. mendeko aurrerapenak, oraindik ere aztertu gabe dirautenak.

Bestalde, hotsek ere esanahia dutelako ideiaren kariaz, Astarloa konturatu zen haur hizkuntzan dauden unibertsalez (Ast *Disc,* 1883: 190 eta hur.), eta onomatopeien teoriaren bidetik (*ib.* 220-221) lehenengoz identifikatu zituen euskarak txikigarrietan darabiltzan hots adierazgarriak (*tx, ñ, x*), Larramendik iradokita badago ere (1728: 90).

Humboldtekin heldu zen esanahi historiko modernoa duen etimologiagintza, hau da, hizkuntz aldaketa azaltzeko xede garbia duena. Adibidez, *-a* artikulua eta bizk. *a* erakuslea elkarrekin lotu eta **ar* etorkia proposatu zuen bientzat; lokatibo pluraleko *-eta-* eta toponimiako *-eta* atzizkiak ere elkarrekin lotu zituen, bai eta 'ugaritasuna' adierazten duen *-za* atzizkia eta *-z* pluralgilea ere, besteak beste (Gómez 2007).

## 8. LITERATUR EUSKALKIAK

«Zer dira horiek?» galdetzen du Villasantek (1988: 108), eta erantzun: «Hizkera batuak, noski, idatzizko zereginetarako erabili direnak».[33] Bonapartek sartu zuen kontzeptu

33. Euskalaritzan horixe esan nahi du, hau da, ez da gehiegi urruntzen «literatur hizkuntza» edo

hau euskalaritzan, eta berari zor zaio euskarak lau dituelako ustea berebat (§7.4.2): «Gipuzkera, bizkaiera, lapurtera eta zuberera literatur euskalkiak dira, literatura inprimatu txiki bat baitute; aldiz, goinafarrerak eta behenafarrerak, aurrekoak bezain euskalki izan arren, ez dute libururik» (1861-09-07ko gutuna; Urquijo 1908: 656-657; itzulp.). Liburuak izatea ez bide da irizpide argiegia,[34] nahiz inprimatuen kopurua beharbada bai (§4.3.2); dena dela, badira beste adierazle batzuk, argi gehiago egiteko baliagarriak. Hurrengo taulan horietako batzuk jaso ditugu:

| | B | G | L | Z |
|---|---|---|---|---|
| Erakundeen babesa | ez/bai | bai | ez/bai | ez/bai |
| Gramáticak | c.1801/ c.1804/c.1805/**1848** | **1729** | 1675?/1714/ **1826?/1827** | 1667?/1828/ **1836** |
| Hiztegiak | **c.1804** | **1745** | 1665/1675?/1712// 1715/**1870?** | **1855-1856** |
| Eskuliburu arauemaileak | ez | **1761** | 1718? | ez |
| Irakurtzen/ idazten ikasteko eskuliburuak | **1884** | 1728?/**1825** | **1840** | **1852** |
| Denetariko literatura formala | ez/bai | bai | bai | ez/bai |

Berez argitaratuak bakarrik hartu behar genituzke aintzat (taulan beltzez emanak), eta honek euskalkien aldeak argiago ikusarazten dizkigu: gipuzkerak —eta aldez zubererak ere— behingoan ezarri zituen bere oinarriak, lapurterak huts egindako saio nahikotxoren ostean baino ez, eta bizkaiera bidea burutu gabe heldu zen LEMaren bukaerara. Dena dela, literatur euskalkiaren sorreraren datatzat ematen duguna ematen dugula, taulak erakusten du LEM dela lauren *ageriko* kodetzearen garaia.

Ohiko galdera da zergatik diren lau, eta ez bat, edo ez bi, baina nabari da galdera horrek erantzun konplexua eskatzen duela. Hasteko, Larramendiren iritziak baduke zerikusiren bat: Bonapartek gerora literatur euskalkitzat joko zituen lauretatik hiru nagusitzat hartu zituen haren sailkapenak (§7.4.1) eta hiruren formak sartu zituen hala gramatikan nola hiztegian (§3.2), euren idatzizko erabilera onartu eta zilegiztaturik.

«hizkuntza estandar» kontzeptutik, ezpada bat baino gehiago izateagatik, grezieraren antzinako dialektoen antzeratsu. Tradizio ingelesean, aldiz, «literary dialect» kontzeptuak hauxe adierazi ohi du: «the use of local language in narrative, dramatic or lyrical textual contexts» (Edney 2011: 660).

34. Inoiz defendatu da GN-z eta BN-z ere liburuak badirenez, ez ote liratekeen hauek ere literatur euskalkitzat jo behar. Jo litezke, jakina, ezertarako izango bada, baina irakurleak pentsa beza goiko taulan jaso direnetako batzuek adierazleak nekez betetzen badituzte, zer zatekeen bi hauezaz.

Agerian ere adierazi zuen nork bere euskalkian idatzi beharra, langa oso goian jarriaz bada ere: «Euskalki guztietan hitz egiteko eta idazteko eskumena txertatu nahiko nuke euskaldun guztietan, eta honela gipuzkoarrak bere euskalkian hitz egin eta idatziko luke, horixe luke nagusi, baina gainerako euskalkiez ere baliatuko litzateke, aukeraren arabera. Berdin diot bizkaitarraz (…) nafarraz, arabarraz eta lapurtarraz» (1745: clx; itzul.).

Orduko gutxik jarri zuten zalantzan behar hori, ez teorian, ezta praktikan ere. Mogelek mintzo arrotzak hiztun arruntari sorrarazi ohi dion arbuioa jo zuen bestela jokatzeko zailtasun nagusitzat: «Giputzak enzuten dutenean bizkaitarren itzkera, bereala abiatzen dira esaten: *Au dek euskera zatar, astun ta gogaitkarria! Nork enzun belarriak estaldu gabe?* Bizkaitar askok (ez erri guzietakoak) esango dizute giputzak dirala *labañak beren itzkeran*» (Mg *CC* xiv). Duvoisinek, berriz, ulergaiztasunaren bidetik zuritu zuen Kardaberatz itzuli izana: «hemen deramagu Lapurdiko eskararat itzulirik, zeren askok adi ez liroten Gipuzkoako hitzalda [‘dialektoa’]» (Dv *LEd,* 1856: vi).

Gure aldetik, erantsi liteke ikuspegi probintzialistari eta foruzaleari berea eman behar zaiola; halaz ere, ez da hain nabarmena ikuspegi politiko unitarista batek —ikuspegi abertzale batek, oraingo hitzez esanda— literatur hizkuntza bakarraren alde jokatuko zukeela orduan. Izan ere, Europa osoan gertatzen ari ziren hizkuntz normalkuntza prozesuen bultzatzaile eta aldezle nagusiak eliteak dira —hizkuntz portaera kode bat ere eskatzen duen «zibilizatze prozesua» delakoaren barruan (Burke 2006: 103)—, baina Euskal Herriko eliteak erdaraz moldatzen ziren beren artean eta gehientsuek euskara hizkuntza arlotetzat zuten (§ 2.2). Testuinguru hartan, literatur hizkuntza batu batekin amets egin zutenak salbuespen baino ezin izan. Aizkibel dugu gutxi horietako bat:

> Hori bera nahi genuke gure euskararekin gertatzea: gutxika-gutxika euskalki klasiko edo literario bat sor dadila, Euskal Herriko biztanle guztiek ulertzeko modukoa, eta hau erraz gerta liteke, baldin eta elizgizonek (…) hizkuntza garbi eta hautu bat erabiliko balute, horretarako hizkuntza honen lehengai garbienak bilduko lituzkeen gramatika bat atondurik, gaurko euskalkiei jaramonik egin gabe (…). Honetarako ezinbestekoa da Akademia bat eratzea (1856: 11-12; itzul.).

Behin egia hori den bezala onartuta, nagusiki bi alderditara jo behar dugu, nire ustez: batetik, prestigio eta ohitura arrazoietara; eta, bestetik, Elizaren artzain-lana nola garatu zen eta honetara. Jakina, hein handi batean banaezinak dira biak.

Egia esan, lau euskalkiak ez daude maila berean, baizik eta praktikan euretatik bi halako koine modura erabili ziren, gipuzkera Hegoaldean eta lapurtera Iparraldean. Jadanik Larramendik biak ipini zituen denen gainetik: lapurtera, tradizio idatzi bakarraren jabea zelako; gipuzkera, zeren «…hauxe bakarrik dago alde guztietatik euskal herriz inguratuta, (…) eta honegatik gorde da ahoz kultura eta bikaintasun gehiagoz»

(1745: xxix; itzul.). Léclusek (1826: 30) Larramendiren hitzok ekarri zituen gogora ahozkoaren eta idatzizkoaren arteko bereizkuntzan oinarrituta lapurterari nagusitasuna emateko. Haatik, mende baten gorabeheran gipuzkerak idatziz aurrea hartu zuenez (§ 4.3.2), ohiko bilakatu zen bi euskalkiak aintzakotzat hartzea. Areago, Bonapartek (1862-02-09ko gutuna; Urquijo 1910: 238) uste zuen zientifikoki bietatik gipuzkerak izan behar lukeela *euskararen egiazko ordezkaria,* toskanera italierarena eta gaztelania espainolarena diren bezalaxe, ezagunena, mintzatuena, landuena, aberatsenetakoa eta erregularrenetakoa zelakoan (Bon *Verb,* 1869: 158). Lehentxeago Michelek ere «dudarik gabe euskalkietan aurrena» zeritzan (*LPB,* 1857: 530; itzul.).

Bi euskalkion ospea aldaki banaren gainean eraiki zen. Aspalditxotik dator Lapurdiko kostakoa hobestea (6. kap. § 1.2); Haranederrek estalkirik gabe dio: «…hemen eskribatuak diren bezala hitz guziak xorroxki erraten badituzte, mintzatuko dira gu kostatarrak bezala; erraten dut, barnetako eskaraz baino hobeki» (He *Gudu,* 1750: 6). Kostako lapurteraren ospea bateraezina zen, jakina, *barnetako* hizkerak idatziz erabiltzearekin. Michelek dioenaren arabera (*LPB* 493), Loison apezpikuaren *Inperioko katixima*-k (1807) «…ez du aldeko gehiegi izan. Itzulpena baxenabartar batek egin zuen, Etxeberri Uztaritzeko apaiz jaunak (…); eta lapurtarrek, euren euskalkia besteen gainetik zeukatenez, obra hau erdeinatu zuten eurentzat ohikoak ez ziren hitzak eta esapideak aurkitu zituztelako» (itzul.). Kontua da Loisonek, etsia hartuta nonbait, 1814tik aurrera Lavieuxvilleren lapurterazko dotrina berriro argitaratzeari ekin ziola. Kostako azpieuskalkiari Bonapartek «propre» izena eman zion, hots, «lapurtera garbia», eta gainerakoari «hibrido» edo «nahasia» (Bon *Verb*).

Gipuzkoan Beterrikoa hobesten da, ez jakin noiztik. Batek baino gehiagok pentsatu dute Larramendirena izateari zor zaiola; edonola ere, jada Peñafloridak (*BorrB,* 1764), *a contrario,* gainerako gipuzkoarrek «Goi-erriko euskararen aurka daukaten ezinegona» aipatu zuen (itzul.).

Gipuzkeraren ospeak ez zituen haren mugak gainditzen idatziz bakarrik. Kardaberatz (Cb *EBO,* 1761: 13), Mogel (Mg *CC,* 1800: xvi) eta Uriarteren esanetan (1859-01-04ko gutuna; Ruiz de Larrínaga 1954: 80), bizkaieraren eremuan, batez ere Gipuzko aldean (Elgoibar, Eibar, Bergara eta Leintz), gipuzkeraz predikatzea ohikoa ez ezik ondo ikusia ere bazen. Mendetsu batean literatur gipuzkeraren izena eta izana sendotu dira: Uriarteren arabera (1859-05-14ko gutuna; *ib.* 83), Elgoibar aldean «Bizkaiko euskerari destainaz begiratzen diote eta oso dira Beterriko euskararen zaleak, eta jende askok ikasten du, eta honegatik nahaste egiten dute; baina ez dute herri xehea *gipuzkoartzea* lortu» (itzul.; etzana nirea). Mogelek ere (*CC* xiii) gipuzkeraz argitaratu zuen liburua uste zuen «izango dala aditua Giputz guzian, Bizkaiko erri askotan ta Naparroa geienean», eta gipuzkerazko liburuak bizkaitarrek «neke gutxiz uler litzaketela», baldin hitz bakan batzuk ikasiko balituzte (Mg *Nom,* 1801).

Literatur lapurtera, Euskara Zaharrean erdietsitako bikaintasunaz gainera (6. kap., § 2), Baionako elizbarrutiak sustatua izan zen. Lavieuxville apezpikuak —eta ondokoek ere berdin— agindu zuen bere dotrina (*CatLav,* 1733) *xoilki* irakats zedila elizbarruti osoan, «eta hau segi dezaten gauza guzietan, hala hitzkunzan, nola maneran». Hala bada, *barnetako* lapurtarrek ez eze elizbarrutiko baxenabartarrek ere (Arberoa, Baigorri, Ortzaize eta Garazikoek) lapurterazko dotrina horietan ikasten zuten idazten eta irakurtzen (§ 2.2.2). Nafarroa Garaian ere lapurterazko liburuetara jotzen zen (Cb *EBO* 12), LEMan gipuzkerazkoetara ere (ala bakarrik?) ohitu zirela ziurtzat eman dezakegun arren.

Literatur euskalki bion formek zubereraz eta bizkaieraz idatzitako liburuak zipriztintzen dituzte; areago, egile batzuek berenaz beste euskalki batean idatzi zuten, eurentzat *literatur euskalkia* zein zen eta horretan, irakurle gehiagotara helduko zirelakoan. Mogelen lehen liburua dugu adibide gailena; ezin esanguratsuagoa da berak gipuzkerazko hitzaurre hartan «erakurle euskaldunari» zuzentzea (Mg *CC,* 1800: iii) eta, aldiz, «irakurle bizkaitarrari» bizkaierazko itzulpenean (Mg *CO,* 1803). Euskal Herriaren beste muturrean, Axularren klasikoa berrargitaratzerakoan (1864) Intxauspe zuberotarraren hitzaurrea ere lapurteraz idatzia da, bere zubererazko debozio liburuek zeukaten irakurleaz beste bat bilatzen zuela nabarmendurik.

Halaz guztiz, gipuzkera eta lapurtera besteak baino gehiagotzat izate honek ez zuen gainditu bazter-eremuen joera zentrifugoa, nahiz LEMan bizkaiera eta zuberera ez diren haien parekoak ez idazle, ez argitalpen kopuruan (§ 4.3.2). Eta honetan baderitzat garrantzia eman behar zaiola bizkaitarrak eta zuberotarrak hurbilagotzat zuten aldaki batean irakurtzen edota —azken batean eliteen erabakiez ari baikara— predikatzen eta dotrina irakasten ohituta egoteari. Mogelek berak dioskunez, «Bizkaian jakin bezain laster (…) gipuzkeraz argitara zela [bere gipuzkerazko liburua], eta egilea Jaurerriko apaiz bat zela, elizgizon bizkaitarretan egundoko asaldura sortu zen (…). Zein onura atera dezakegu, zioten, guretzat arrotz eta zail den euskalki batean idatzitako obra batetik?» (Mg *Nom,* 1801; itzul.). Pentsatzekoa da zuberotarrek ere ez zuketela gogo onez hartu Astros apezpikuaren lapurterazko dotrina (*CatAst,* c. 1824) erabili beharra, Baionako elizbarrutia Pirinio Apaletako departamendu osora hedatu zenean (1801): izan ere, berak edo ondokoak laster itzularazi zuten zubererara, beranduenik 1834 aldean (Padilla 2013).

Gorago esan bezala, bada azken eragile bat, *last but not least*, garrantzi handia izan bide zuena hala literatur euskalki batzuen sustapenean, nola haien aurkako indar zentrifugoetan: Eliza. Frantziako Iraultza arte (1801eko Konkordatua arte, zehazkiago), Euskal Herria bost elizbarrutitan banatuta dago eta, kontuak apur bat errazturik, Akizekoaz beste laurak honela erlaziona ditzakegu literatur euskalkiekin: Kalahorrakoa (bizkaiera), Iruñekoa (gipuzkera), Baionakoa (lapurtera) eta Oloroekoa (zuberera).

Erlazioa argia da Iparraldean, non apezpikuek dotrinak arautu ohi baitzituzten eta beste idazlan batzuen egitea edo itzultzea sustatu.

Hegoaldean elizbarrutiaz beheitiko hierarkiek —artzazpez barrutiek eta bikariotzek— jardun zuten honetan (Lizundia 2008), eta hauen erabakien arabera tokian tokiko hizkerak bultzatu ziren edo literatur euskalkia. Gipuzkoako artzapez barrutian[35] gero eta literatur gipuzkera arautuago batean argitaratzen zen Irazustaren dotrina izan zen jaun eta jabe (§ 5.3.1.2). Bizkaian, aldiz, bi erregistro sortu ziren, bata jasoa edo erdi-jasoa, literatur euskalkian, eta bestea apala, dotrinetan erabilia, tokian tokiko hizkeran landua (§ 5.5.2.1), Mogelek (*CC* xvi) proposatu ereduaren arabera: «Libruetan bakoitzari eman bear zaio: giputz izkribitzen danean, giputz euskera naaste gabea alegiñez; labortarrak beren gisara, ta orobat bizkaitarrak. Baña buruz ikasten dan doktrina, obe da erakastea bakoitzaren errian itz egiten dan bezela. Ez dago onen premiarik sermoi ta bestelako libruetan». Oraindik xx. mende hasieran bost dotrina behintzat erabiltzen ziren: Markinan Mogelena, Durangon Arzadunena, Orozkon Laudiokoa, Gernikan Busturiako bikariotzarena eta Arratian bertakoa (Villasante 1979: 401-402).

**8.1. Literatur lapurtera**

xviii. mendean maila apal batean murgildu zen eta, jakina, Iraultzaren ondorioak zuzen jasan zituen literatur euskalki honek halako eraberritze bat izan zuen 1836tik aurrera edo, hein handi batean Abadiak eta Bonapartek sustatutakoa (§ 4.1.2.2). Tradizio klasiko (§ 3.3) eta Iparraldeko koine gisa zeukan ospea gorde zuen —edo agian berreskuratu—, baina lapurtera klasikotik urrunduz zihoazen aldaketak jaso zituen, egiazko haustura BEMaren hasieran hobeki kokatuko balitzateke ere (§ 5.3.2). Lafittek (1944) *literatur nafar-lapurtera* izena eman zion hortik eratu zen idazkerari, hein batean behintzat ekialderagoko mintzoen ezaugarriak onartzean baitatza. Dena dela, muga garbi xamar bat dago kostatarren (Duvoisin, J.B. Elizanburu, Hiribarren) eta ekialdeko hizkerei amore gehixeago ematen zieten *barnetako* idazleen arten (Laphitz, Arbelbide eta batez ere Hiriart-Urruti).

**8.2. Literatur gipuzkera**

Bonaparteren euskalkietan gipuzkera da beranduenik eta eskasenik lekukotua. Literatur gipuzkera, aldiz, bat-batean sortu zen, 1745 eta 1767 artean, nork bere euskalkian

35. Artzapez barruti honek ia osoki hartzen zuen Gipuzkoa, Hondarribiko barrutiko herriak (Hondarribia, Irun, Lezo, Oiartzun, Pasai Donibane eta Errenteria) eta Leinzkoak (Antzuola, Aretxabaleta, Elgeta, Arrasate, Gatzaga eta Bergara) izan ezik (Múgica 1918: 233).

aritzeko Larramendiren dei hartatik, hasieran berak zuzenean zaindua, Mendiburu eta Kardaberatz josulagunen argitaratuekin batik bat. Bikoitza jaio zen, baina: Mendiburu oiartzuarrak (Iparraldeko goinafarrera-ren hiztuna, Bonaparteren sailkapenaren arabera) ekialderantz begira jardun zuen, lanbidez Iruñeko elizbarrutian eta Nafarroan batik bat ibili baitzen; Kardaberatz hernaniarrak mendebalderantz begira, Loiolatik aritu baitzen, eta Bizkaian ere bai. Bien eraginpean idatziko dute hurrengo belaunaldiko idazle guztiek. Dena dela, Mendibururen nafar-kutsuko idazkera —halere *det, dezu…* ere badarabilena (cf. orain A. Garmendia 2016)— denboraz hain egin zitzaien arrotz, nonbait, ezen Arruek (1883) beraren lanik ospetsuena (Mb *JBDev*) gipuzkeraz ipini beharra sentitu baitzuen.

1800ean Mogelek bere ama-euskalkia utzita gipuzkeraz idaztea deliberatu zuenean bazekien *zein gipuzkeratan* idatzi behar zuen, alegia, Larramendi, Mendiburu eta Kardaberatzen gisan (§ 5.3.1.2). Berdintsu jokatu zuen Lardizabal zaldibiarrak (cf. Lard *Gram* 30, Mogelen hitzak parafraseaturik), hain diziplina eta doitasun handia non Bonapartek eta Uriartek literatur euskalki honen eredu hautatu baitzuten (1857-08-17ko gutuna; Ruiz de Larrínaga 1954: 53).

1840tik aurrera alboko literatur euskalki bietatik konplexurik gabe elikatzen da (§ 5.5.1.3), eta haietan jasoena eta landuena da, hain non, ikusi bezala, Bonapartek euskalki guztien aurrekotzat jo baitzuen. Honetarako idazle onak izatea ez ezik, ezinbestekoak izan ziren gizartearen estimua eta Gipuzkoako Aldundiaren babesa (§ 4.3.9).

### 8.3. Literatur bizkaiera

Bizkaiera 1745 baino lehen ondoen lekukotutako euskalkietako bat izan arren, ez dugu *literatur bizkaiera* izena erabiltzen 1802-1816 tartean argitaratu zuen idazle taldea arte —Uriarte euren epigonotzat jo liteke—; talde honen ekarpenari batzuetan *bizkaiera klasikoa* izena ere ematen zaio.

Bi aitarekin jaio zela esan ohi da, Añibarro eta Mogelekin, eta euren obra banatan: *Escu-liburua* (1802) eta *Confesino ona* (1803). Nahiz harreman onak izan, aski ezberdin jokatu zuten, Mogelek (Mg *PAb* 195-202) idatzi zuen fr. Pedro de Urlija eta D. Juan de Zandija lagunen elkarrizketa lekuko. Añibarro «libru santuen irakurtzetik» sortzen den onuran sinisturik hasi zen idazten Bizkaiko herritar apalentzat, eta «errukiturik (…) ez idoroteaz dotrinazko txikiak baño beste librurik Bizkaiko euskeran» (*EL*[1] 1802: 3). Mogelek, berriz, irakurleria jaso edota zabalagoa bilatu bide zuen lehen argitalpena (Mg *CC,* 1800) gipuzkeraz egiterakoan, eta nabarmen jasoagoa ondoko idazlan batzuetan, hala *Peru Abarka*-n nola klasikoen eta Pascalen itzulpenetan. Honetan datza bien arteko lehen aldea, nabarmen bezain nabarmendu gabea.

Bigarrena hizkuntzan bertan datza. Esan ohi da Mogelek eta Añibarrok korronte bana

sortu zutela —«Arratiako eskola» eta «Markinako eskola»—, oinarritzat zeinek bere hizkera baliatu omen zutelako: Añibarrok Arratia bere jaioterrikoa eta Mogelek Markinakoa, haurtzaroa bertan igaro eta ia hogei urtez erretore izan zen herrikoa. Egiatan ez eskola bata, ez bestea, ez dira hizkera horien ordezkari leialak, ezta hurrik eman ere, bizkaiera idatzi estandarra izateko lehian ibili ziren bi eredu landu xamar baizik (§ 5).

Añibarrok bide luzea egin zuen bizkaiera eredu orokor baten bila, une batetik aurrera Zabalaren laguntzarekin: arratieraren ezaugarriei (*Riu* araua, *daude* 'dute', etab.) uko egin zien forma hedatuagoen alde, aldaera oso eta erregularrenak bilatu zituen eta etengabe esamolde berriak ikasi zituen (§ § 5.2 eta 5.3.1). Mogelek, aldiz, bizkaiera gainerako euskalkietatik bereiziago egiten duten ezaugarriak azpimarratzea erabaki zuen, hala nola eufoniak (*ua* > *uba, ia* > *ija;* Mg *PAb* 18-19), edota euskara erdaratik bereziago (*p f*-ren ordez; § 5.2.2). «Gero eta gehiago murrizten duzu Markinako euskara» leporatu zion Añibarrok (itzul.; cf. Urgell 2001a: xxx). Gainerakoan, ezaugarri askotan bat datoz, elkarrengandik ikasteko gai eta garaiko seme diren heinean.

Literatur bizkaieraren bat-bateko jaiotzaren hipotesi tradizional horrek ñabardura batzuk behar ditu. Salaberri Muñoak (2004) gogoratu du Kardaberatzen bizkaierazko lanek (§ 4.1.1.1) eragina izan zuketela, gutxienez *-aren* genitiboaren erabileran (§ 5.3.1.2). Ulibarrik (2015: § 4.3.3.2) erakutsi du ziurrenik hautu batzuk —hala nola genitibo sing. bera, eufoniak (§ 5.2.2) eta bokal bikoitzak (§ 5.2.1.d eta e)— XVIII. mendearen bigarren erdialdetik aurrera sermoilarien artean hedatzen ari zirela.

Bonapartek lehen unean (1862-02-19ko gutuna; Urquijo 1910: 237) bizkaiera bi euskalkitan banatu zuen: «erdialdeko bizkaiera (esateko moduan landugabea)» eta «liburuetako literatur bizkaiera» (Yrizar 1981: 106; itzul.). Geroago sailkapena beste era batera antolatu arren, markinera izan zen beti berarentzat *literatur bizkaiera*. Esan gabe doa Uriartek markineraz jardun zuela idatziz. Halere, *Bula ineffabilis*-aren itzulpena agindu ziotenean, «bukaerako *-a*-dun arratiera» bezala definitu zuen idazkera (hots, *burua* dioena, eta ez *burue*) erabili nahiago izan zuen (1860-05-29ko gutuna; Ruiz de Larrínaga 1957: 221).

1820 ondoan, gipuzkeraren urterik onenetan, Uriartez ia beste inork ez zuen bizkaieraz ezer berririk argitaratu (§ 4.3.2). Garairik oparoena BEMan etorriko da, berriro ere bi eredu bertsuetan banatuta: Azkue Añibarroren bidetik eta Arana Mogelenetik.

### 8.4. Literatur zuberera

Literatur euskalki honen historiaren haria, hala kanpokoa nola barnekoa, gaizki ezagutzen dugu eta gutxi ikertua da.[36] Nahiz Zuberoa izan euskara lantzen aurrenetakoa, nahiz izen handiko idazleak eman eta euskalki oso berezia izan, idazterakoan zuberera

36. Hau biziki aldatuko da Padillaren tesia (2017) defendatu izanarekin aurki argitaratzea opa diot.

luzaro lapurteraren izen handiaren azpian bizi izan zen. Adierazgarria da Oihenartek *Notitia*-n (1638/1656) adibideak lapurteraz ematea, Abadiak deitoratu bezala (1836: 30), ustez eta ekialdeko formak ustelak direla (i.e., modernoagoak; § 7.1.1). Adostasunik ere ez dago zein euskalkitan idatzi zuen (6. kap., § 2, 16. oh.), baina, nolanahi ere, literatur lapurteraren eraginpean nabarmen. Haren estilo jasoa —bai eta haren euskalki anbiguotasuna ere agian— nekez balia zitekeen eredu gisa, ondotik erlijio liburu apalez besterik ez zen argitaratu eta.

Uste zabaldua da literatur zuberera Belapeire (1696) eta Maisterrekin (1757) jaio zela, Oloroeko elizbarrutiaren babesaren pean (cf. berriki Padilla 2013). Zentzu honetan, espekula daiteke Akizeko elizbarrutiaren mendeko Nafarroa Behereko lurraldeetan Oloroeko argitalpenak baliatu zituzketela, han ez baitzen euskaraz argitaratu XVIII. mendearen erdialdera arte, dakigularik. Ikusi egin beharko da ea honela azaldu litezkeen Lopezen itzulpenean (AR, 1782) Caminok (2008) idoro dituen zubererazko ezaugarriak.

Zuazoren ustez (1989), ostera, XIX. mendeko arauemaileetan duke hasiera literatur zuberera, euren euskalkiaren izena harro goratzeari, deskribatzeari eta lantzeari ere ekin zion euskalari eta idazle taldean. Aurresku eta dinamizatzaile Xaho izan genuen, Arxu, Intxauspe, Gèze eta beste lagun zituela, doi-doi Bonapartek aintzat hartzeko moduan. Ikusi beharko, bestalde, zubereraren aldarrikatze berri horrek lotura duenentz Iraultzak (1790) Ipar Euskal Herria bi arrondizamendutan (Baionakoa eta Maulekoa) banatu izanarekin.

**Irakurgai osagarriak**

Alberdi & Aragón 2004, Altzibar 1992a, Bidador 1996, Burke 2006, Esteban 2013, Fernández de Gobeo 2017, A. Garmendia 2016, Gómez 2007, 2008c, Gorosabel 1899, Imizcoz 2014, Jimeno Jurio 1997, 1999, Laka 1992, Lakarra 1985a, Lekaroz 2014, Madariaga 2002, Mitxelena 1982, 1983, Orpustan 1991a, Oyharçabal 2001a, Quijada 2015, Ros & Saiz 2001, Sarasola 1986, Ulibarri 2008, Urgell 1991, 2001a, 2002b, 2004, Zabaltza 2011, Zalbide 2007a, Zuazo 1988a, 1992 [1987].

8.

# BIGARREN EUSKARA MODERNOA

Iñaki Camino

## SARRERA HISTORIKOA: 1876-1968

(Mikel Aizpuru)

xix. mendearen amaieran hainbat fenomeno uztartu ziren Euskal Herrian, nahiz eta indar ezberdina izan lurraldearen arabera. Honako hauek izan ziren funtsezkoenak: alderdi modernoen agerpenaren eraginez bizitza politikoa eraberritzea; abertzaletasun politikoa sortzea; industrializazioa eta hiritartzea; hezkuntza-sareak zabaltzea eta sendotzea, eta euskararen inguruko hausnarketak —sarritan kontrajarriak— garatzea. xx. mendearen bigarren herenaren amaieran, guztiz errotuta zeuden fenomeno horietako batzuk, eta garai hartako Euskal Herriak zerikusi gutxi zuen 1891koarekin. Dena den, Gerra Zibilak haustura nabarmena eragin zuen aurreko urteetan gertatzen ari ziren hainbat prozesutan, eraberritze politikoan, sozialean eta kulturalean bereziki.

### 1. DEMOGRAFIA

Urte batzuk lehenago hasi baldin bazen ere, 1891tik aurrera Euskal Herriko biztanleriak izugarrizko hazkundea izan zuen eta bikoiztu egin zen. Gorakada horrek areagotu egin zuen eskualdeen arteko desoreka.

| Urtea | Euskal Herria | Araba | Bizkaia | Gipuzkoa | Nafarroa Garaia | Lapurdi | Nafarroa Beherea | Zuberoa |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| **1900** | 1.109.609 | 100.685 | 312.087 | 195.850 | 307.669 | 104.308 | 45.281 | 24.728 |
| **1910** | 1.174.922 | 101.429 | 350.661 | 226.684 | 312.235 | 113.167 | 44.685 | 26.061 |
| **1920** | 1.278.546 | 103.054 | 410.291 | 258.557 | 329.875 | 112.790 | 40.382 | 23.597 |
| **1930** | 1.440.706 | 108.757 | 485.969 | 302.329 | 345.883 | 135.676 | 39.889 | 22.203 |
| **1940** | 1.524.206 | 117.200 | 511.892 | 331.753 | 369.618 | 134.536 | 37.553 | 21.654 |
| **1950** | 1.643.272 | 122.172 | 569.944 | 374.040 | 382.932 | 138.405 | 35.056 | 20.723 |
| **1960** | 1.982.995 | 142.435 | 755.139 | 478.337 | 402.042 | 150.593 | 33.927 | 20.522 |
| **1970** | 2.565.377 | 206.995 | 1.043.875 | 631.003 | 464.867 | 166.920 | 32.360 | 19.357 |

Gerra aurretik, nabarmen egin zuen gora Bizkaiko eta Gipuzkoako biztanleriak; Nafarroan eta Lapurdin, aldiz, ez zen oso deigarria izan hazkundea, Araba bere horretan mantendu zen eta biztanleria galdu zuten Nafarroa Behereak eta Zuberoak.

Meategiek eta industrializazioak eskatzen zuten langileen etorrera izan zen hazkundearen arrazoi nagusia, baina horrekin batera osasungintzan eta higienean gertatutako aurrerapenek ere hilkortasuna jaisten lagundu zuten. Euskal Herritik bertatik eta Espainiako hainbat lurraldetatik hurbildu ziren lanerako esku berriak, eta Bilbo eta haren ingurua hiritartzea izan zen ondorio nabarmenena. Industrializazioak Gipuzkoan ere izan zuen eragina, baina neurtuagoa eta patxadatsuagoa izan zen, eta ez zuen eten bortitzik sortu aurreko eredu sozialekin, kulturalekin edo politikoekin.

Gerra Zibilaren ostean, Nafarroara eta Arabara zabaldu zen industrializazioa, hiriburuetara bereziki, eta hegoaldeko lau lurraldeek beste hazkunde fase bat bizi izan zuten. Ipar Euskal Herriari dagokionez, alde esanguratsua egon zen kostaldearen eta barnealdearen artean. Izan ere, lasai hazi zen Baiona ingurua, baina Nafarroa Behereak eta Zuberoak biztanleak galtzen jarraitu zuten etengabe, nekazaritzak, lurralde horietan nagusi, bertako seme-alabak kanporatzen jarraitu baitzuen.

## 2. HISTORIA POLITIKOA

1890. urteak fase politiko berri bat ireki zuen Espainiako historia politikoan, urte horretan jarri baitzen indarrean gizonezkoen boto-eskubide unibertsala. Aukera politiko berriak ez zuen aldaketa nabarmenik ekarri, ez behintzat epe motzera, baina sistema berri baten adierazle izan zen, egoera berriak herritarren parte-hartzea eskatzen baitzuen, formalki behinik behin. Beraz, ez da kasualitatea garai horretan indar politiko berriak agertzea eta beste batzuen oihartzuna indartzea. Bigarren taldean daude karlistak eta errepublikazaleak; lehen taldean, aldiz, sozialistak eta abertzaleak. 1886. urtean sortu zen PSOEren lehen

euskal saila, Bilboko langileen artean; eta denbora luzez hiri horren ingurura mugatu zen alderdi sozialistaren eragina. Era berean, Euzko Alderdi Jeltzalearen sorlekua ere Bilbo izan zen. Sabino Aranak sortu zuen erakundeak bi berrikuntza nabari ekarri zituen. Alde batetik, euskaldunak ez zirela espainiarrak zabaldu zuen (horrelako zerbait publikoki adierazten zen lehen aldia zen). Bigarrenik, eta liburu honen gaiarekin hertsiki lotuta, euskara jarri zuen euskal naziotasunaren oinarri, arrazarekin batera. Dena den, urteak beharko zituen EAJk bere asmoak eztabaida politikoaren erdigunera lerratu arte.

Ipar Euskal Herrian, errepublikazale laikoen («gorrien») eta kontserbadore katolikoen («xurien») arteko tirabirak baldintzatu zuen denbora luzez hango politika. Eskuineko taldeek, bereziki, euskarazko prentsa erabili zuten beren asmoak herritarren artean zabaltzeko. Bestalde, 1914-1918ko Mundu-Gerrak arrasto sakona utzi zuen Bidasoaz iparraldera. Milaka gaztek hartu zuten parte borroketan eta asko eta asko hil ziren. Gerraostean, nabarmen zabaldu zen frantses nazionalismoa eta euskaltzaletasuna eremu politikora eramateko saio urriak ito zituen.

Garai berean, 1917tik aurrera, hegoaldeko bizitza politikoak eraldaketa sakona jaso zuen. Lehen Mundu Gerrak irabazi asko ekarri zion ekonomiari, baina inflazioak garestitu egin zuen bizitza eta horren ondorioz ugaritu egin ziren herritarren protestak. EAJ ere asko hazi zen eta euskal politikaren ardatzetako bat bilakatu zen Espainiarekiko harremana. Testuinguru horretan, banaketa gertatu zen karlisten artean eta nazionalismo espainiarraren adar batzuek toki nabarmena hartu zuten. Horren ondorioz, ez da harritzekoa euskaldun askok txaloz hartzea Primo de Riveraren diktadura 1923. urtean. Militar horren agintaldiak eragin garrantzitsua izan zuen. Hasieran, alderdi politikoen jarduna debekatu zuen, baita hizkuntza «erregionalen» erabilera ofiziala ere, baina urteak pasa ahala, arindu egin zen bigarren debeku hori, eta hainbat taldek euskararen aldeko neurriak proposatu eta bultzatu zituzten. «Euskaltzaleak» izan zen talderik garrantzitsuena zeregin horretan.

1931ko apirilaren 14an aldarrikatu zen Espainian Bigarren Errepublika. Aldaketa politiko, sozial eta kultural ugari gertatu ziren epe laburrean. Laizismoa eta neurri sozialak bultzatzen saiatu ziren sektore ezkertiarrak. Abertzaleek, aldiz, euskal kultura berreskuratzearen eta birmoldatzearen alde egin zuten lan, baita autonomia-estatutuaren egitasmoa aurrera ateratzeko ere, aurrena eskuineko taldeekin batera eta 1934tik aurrera ezkerrera hurbilduta. Eskuineko indarrek, karlistek eta monarkikoek bizkarra eman zioten aldatzeko ahaleginei eta sutsuki babestu zuten altxamendu militarra. 1936 eta 1939 bitartean gertatu zen gerrak eten egin zuen aurreko urteetako bilakaera, eta, ondorioz, gizarte berria eraikitzeko ahalegina bertan behera geratu zen.

Frantziako eztabaida politikoak ezagutu zituen Ipar Euskal Herriak, eta hango biztanle askok eskuineko indarrei eman zieten babesa. Egoera horretan, hegoaldetik iritsitako

hainbat erbesteratuk harrera txarra izan zuten Aturriren ibarretan. II. Mundu Gerraren ondorioz kostaldea alemanen esku geratu zen eta barnealdea Vichyko gobernuaren menpe. Aliatuek garaipena lortu zutenean, ezkutatu egin zen eskuin muturra eta demokrata-kristauen eta gaullisten esku geratu zen lurraldearen kontrola. Beste gerra batek, Aljeriako independentziarenak, belaunaldi berri bat azaleratu zuen: abertzaletasun politikoa aldarrikatu zuen taldea, hain zuzen, *Enbata* aldizkariaren inguruan bildutako gazteek eraturikoa. Garai berean hasi ziren ezkerreko alderdiak, batez ere sozialistak, indarra hartzen eta eskuineko indarren hegemonia higatzen.

Francoren diktadurak haustura handia eragin zuen Hego Euskal Herrian, bereziki abertzaleak eta ezkertiarrak nagusi ziren inguruetan. Ideia horien jarraitzaile gehienek kartzela, erbesteratze, umiliazio edota heriotzarekin ordaindu zuten beren atxikimendua. Gerraren ondorioz ia erabat desagertu zen tradizio errepublikazalea, eta abertzaleena etxeko txokoetan babestu zuten familia-tradizioak eutsita. Jarraitzaile ugari izan zituen frankismoak Hego Euskal Herrian, baina, paradoxikoki, proiekturik gabe utzi zituen gerra irabazi izanak, eta erakundeen kudeaketara mugatu zen haien jardun nagusia.

Abertzaletasuna eta erbesteko Euzko Jaurlaritza izan ziren Frankoren aurkako erresistentzia nagusia, komunistekin batera. Alemanen aurka borrokan aritu ziren aliatuen esku hartzea Espainian bilatzen zuen jeltzaleen estrategiak, baina Gerra Hotzak kontrako politika bultzatu zuen eta Estatu Batuek eta Francok lankidetza-hitzarmenak sinatu zituzten 1953an. Errepublika, gerra eta gerraostea bizi izan zuen belaunaldiko kide askok, etsita, alde batera utzi zuen borroka politikoa hamarkada horretan. Etsipenari aurre egin nahian, ikasle gazte talde batek erakunde berria sortu zuen 1959. urtean, Euzkadi ta Askatasuna (ETA). Hasiera batean EAJrengandik hurbil baldin bazegoen ere, 1960ko hamarkadan bilakaera ideologiko sakona izan zuen eta abertzaletasun iraultzailearen aldeko apustua egin zuen.

## 3. HISTORIA INSTITUZIONALA

Frantziako Iraultzaren garaitik aurrera oso desberdinak izan dira Ipar Euskal Herriko eta Hego Euskal Herriko errealitate instituzionalak. Bidasoaz haranzko lurraldeek ez dute aitortza ofizialik Frantziako estatuan, eta Pirinio Atlantikoko departamenduaren barruan sailkatu zituzten, bertako tradizio politiko, administratibo edo kulturalak aintzat hartu gabe. Lapurdiko eta Nafarroa Behereko eskualdeak Baionako suprefeturan batu ziren eta 1928tik aurrera Zuberoa Oloroekoan. Hainbat ahalegin egon ziren departamendua sortzeko, baina proposamenak jarraitzaile gutxi izan zituen eta ezerezean geratu zen.

Hego Euskal Herriari dagokionez, prozesu kontrajarriak gertatu ziren garai horretan. Nafarroak 1841eko Lege Pakzionatuan oinarritutako autonomia administratiboari eutsi

zion; beste hiru lurraldeek, aldiz, Kontzertu Ekonomikoaren Dekretuak eskainitako autonomia fiskalean aurkitu zuten aldundiak kudeatzeko heldulekua. XX. mende hasieran, estutu egin ziren aldundien arteko harremanak, bakoitzak bere burujabetza mantentzen bazuen ere; eta aldundien eta Espainiako gobernuaren arteko tirabiren sortzaile izan ziren kontzertu ekonomikoari egindako berriztatze guztiak.

Kataluniako eredua aintzat hartuta, abertzaleek eta beste indar politiko batzuek hiru, edo lau euskal lurraldeen autonomia bermatuko zuen legedia eskatu zuten. Eskari horien artean garrantzitsuena 1917an Arabako, Bizkaiko eta Gipuzkoako aldundiek egindakoa dugu. Foruak berreskuratzea eskatzen zen, eta hori gertatu ezean, autonomia-estatutua eskatzen zuten, baina Espainiako gobernuak ez zion jaramonik egin eskakizunari. Handik gutxira, 1924an beste proposamen bat luzatu zioten aldundiek Primo de Riverari, baina orduan ere berdina izan zen emaitza.

1931n hasitako errepublikak bi aurpegi erakutsi zituen. Errepublikak iraun zuen urte laburretan ez zen aldaketarik gertatu, ez udalen eskumenetan, ezta aldundien egituretan ere. Baina Gobernuak izendatutako batzorde kudeatzaileen esku geratu zen aldundien zuzendaritza. Bestetik, urte hartan bertan onartutako konstituzioak autonomiaren aukera eskaintzen zuen, hainbat baldintza zorrotz betez gero. Hainbat estatutu-egitasmo bultzatu ziren, baina arrazoi desberdinak tarteko, ez ziren gauzatu 1936ra arte. Egitasmo horietan, euskarari, gaztelaniarekin batera, izaera ofiziala eman zitzaion eta hezkuntzan zein administrazioan erabiltzeko aukera aitortu zitzaion. Garai hartan aukeratutako hainbat udaletan, derrigorrezkoa izan zen bi hizkuntzak ezagutzea lanpostu bat betetzeko orduan.

Militar matxinatuen garaipenak aldaketa sakonak ekarri zituen. Garrantzitsuenak 1937an bertan gauzatu ziren: Kontzertu Ekonomikoa kendu zitzaien Bizkaiko eta Gipuzkoako lurraldeei, eta ondorioz, zeinek bere burua kudeatzeko ahalmena galdu zuten. Bestalde, Francoren gobernuek bultzaturiko zentralizazioak udalen eta aldundien kontrol zorrotza ezarri zuen: agintarien oniritzia behar zen zinegotzi, alkate edo ahaldun izateko, gobernadore zibilak izendatzen baitzituen, eta inor ez zen ausartu haren aginduak auzitan jartzen.

## 4. HISTORIA KULTURALA ETA IDEOLOGIA

Alfabetatzea, laizismoa eta euskal kultura berriztatzea eta aberastea dira garai hartako fenomeno garrantzitsuenak. XIX. mendearen bukaeratik aurrera, euskal gizartearen gehiengoak bazekien gaztelaniaz edo frantsesez idazten eta irakurtzen, eskualdearen arabera. Lurralde bakoitzaren erritmoa desberdina izan bazen ere, baita eskualdeen eta sexuaren araberakoa ere, gehiago zekiten gizonezkoek emakumezkoek, baina

guztiek jarraitu zuten antzeko bidea. Gaitasun horrek sasoi hartan asko garatu ziren komunikabide modernoen irakurketa erraztu zuen. Lan-munduko aldaketek eta hiritartzeak eragindako bilakaerarekin batera, mundua ikusteko begirada berriak sortu zituen prentsa irakurtzeak, bai eta bizimodu berriei bidea zabaldu ere. Lehen hezkuntza oso garatuta baldin bazegoen ere, ez zen gauza bera gertatzen bigarren mailako sarearekin, probintzia bakoitzean institutu bakarra egon baitzen xx. mendearen lehen herenera arte; halaber, unibertsitatea ere gutxi batzuentzako zen, Euskal Herrian ez baitzen unibertsitate publikorik egon aztertzen ari garen garaiko azken urtera arte, 1968ra arte, hain zuzen. Urte horretan sortu zen Bilboko unibertsitatea. Urte batzuk lehenago, 1960. urtean jaso zuen unibertsitate-titulua Nafarroako Unibertsitateak. Ordura arte, 1886az geroztik jesulagunek Deustun zuten ikastetxeak bakarrik zuen unibertsitate kategoria. xx. mendeko hainbat unetan behin eta berriz entzun zen unibertsitatearen aldarrikapena.

Garai hartan gertatzen hasi ziren prozesuen artean, oso garrantzitsua izan zen erlijioaren tokiaren bilakaera. Euskal herritar gehienek fede katoliko sutsua erakutsi zuten aurreko mendean, baina eraberritze sozioekonomikoak eta kulturalak higatu egin zuten fede hori, eta, bereziki, auzitan jarri zuten Elizak gizarte-bizitzan eta hezkuntzan izan beharreko tokia. Beste kasu batzuetan ez bezala, Euskal Herri osoa hartu zuen fenomenoak. Ipar Euskal Herrian, laizismoaren inguruko eztabaidak euskarazko prentsa sorrarazi zuen.

Euskal kulturari zegokionez, hainbat fenomeno gertatu ziren. Alde batetik, gehiago uztartu zen kultura Espainian eta Europan gertatzen ari ziren eztabaida eta produkzioarekin. Oso fenomeno nabarmena izan zen bai pinturan, bai eta gaztelaniaz idatzitako literaturan (Baroja, Unamuno, Maeztu) ere. Bestetik, garrantzi berria hartu zuten Euskal Herriko berezko kultura-elementuek eta hainbat elkarte sortu ziren haiek babestu eta ikertzeko. Baionako Euskal Museoa (1924) dugu kezka horren adibide. Azkenik, euskal kultura apurketarik gabe eguneratzeko ahaleginen lekuko nabarmenena izan zen Eusko Ikaskuntzaren sorrera(1918).

Frankismoak, beste arlo askotan bezala, erabateko atzerakada eragin zuen hezkuntzan eta gizarte-bizitzan. Izan ere, Eliza katolikoaren irizpideak inposatu zituen, kulturan berrikuntza ekar zezakeen oro zapaldu zuen eta «euskal» usaineko erakunde eta ekitaldiak ia erabat desagerrarazi zituen. 1950. hamarkadara arte itxaron behar dugu pixkanaka-pixkanaka, hainbat fenomeno berri ikusteko. Hamarkada horren bukaeran eta hurrengoan berriro ere hainbat pertsona eta talde agertu ziren, beren kezkak plazaratzeko arte-lanetan (Oteiza eta Txillida), erdal literaturan (Otero, Martin Santos eta Celaya) eta beste esparru batzuetan. Beti ere, ahopeka eta agintarien esku hartzearen beldur.

## 5. EUSKARAREN EGOERA

Euskarak hiru egoera eta une desberdin bizi izan zituen urte horietan. Lehenik eta behin, hazkunde demografikoaren ondorioz euskaldunen kopuruak gora egin bazuen ere, atzerakada nabarmena bizi izan zuen hizkuntzak arestian aipatu ditugun faktoreen ondorioz; etorkinen presentzia, hiritartzea, industrializazioa, erdaraz egindako alfabetatzea eta horiekin batera agintari publikoen neurriak izan ziren eragile.

Bizkaian Bilboko mendebaldean, Araban Kantauri isurialdean eta lautadako iparraldean, Nafarroan Iruñe inguruan eta Ipar Euskal Herrian Baionan kokatzen zituen euskararen mugak Velascoren neurketak 1867an. Haren esanetan, gipuzkoarren %90ek, bizkaitarren %81ek, arabarren %10ek, Nafarren %20k eta Ipar Euskal Herriko biztanleen %64k hitz egiten zuten euskaraz. Ehun urte geroago, nabarmen aldatu ziren marra horiek: Aiara harana ia erabat erdaldundu zen Araban eta gauza bera gertatu zen Iruñerriarekin. Erronkarin XX. mende hasierara arte euskaraz egiten zen eta Zaraitzun geroagora arte. Bilbon bertan euskaldunen kopurua %20ra murriztu zen 1920. urtean eta lurralde horretan eta Gipuzkoan geroz eta toki gehiago hartu zuten erdaldun elebakarren taldeek. Ipar Euskal Herrian, XIX. mende bukaeran Frantziako Errepublikak eskola-sarea lurralde osora zabaltzeko egindako ahaleginak eta 1914tik 1918ra bitarteko gerrak ahuldu egin zuten euskararen tokia hango gizartean. Bidasoaren bi aldeetan, hizkuntza ofizialaren erabilera bultzatu zuten estatu modernoek, eta zenbait kasutan, berariaz debekatu zuten *dialecto*-en edo *patois*-en erabilera publikoa. Bizitasun ekonomikoa eta soziala gune erdaldunetan biltzeak ere kalte handia egin zion euskararen ezagutzari eta erabilerari. Ildo horretan, gogoratu behar da gizarte-talde batzuetan besteetan baino hobeto gorde zela euskara. Hainbat lagunek (Unamuno da ezagunena) aldarrikatu zuten euskararen heriotza, euskaldunen garapenerako oztopoa zelakoan.

Atzerakada gertatzen ari zen bitartean, XIX. mendean, fenomeno horren aurkako erreakzioa ere gorpuzten hasi zen. Hainbat aitzindari eta gune izan zituen jarrera horrek. Euskal Lore Jokoen ondoren zenbait aldizkari sortu ziren, batzuk elebidunak, beste batzuk euskara hutsean (lehenengoa Kaliforniako *Escualdun Gaseta* 1885. urtean); bestalde, hainbat ahalegin egin ziren euskalkien arteko aldea murrizte aldera, besteak beste hizkuntza literarioaren batasunerako zenbait proposamen. Abertzaletasunak eta neurri txikiagoan karlismoak euskararen aldeko neurriak eta ekintzak proposatu zituzten, eta 1910eko hamarkadan hainbat ekimen garrantzitsu gauzatu ziren. Euskaltzaindia euskararen akademiaren sorrera izan zen horietako bat eta euskararen erabilera hezkuntza arautuan, Bizkaiko auzo-eskoletan, beste bat. II. Errepublikan indartu egin ziren asmo horiek. Garai horretakoak dira euskara berreskuratzeko ahaleginak ere, eta orduan agertu ziren euskaldunberri ikasiak.

Frankismoak, beste arloetan bezala, ia erabateko etena eragin zuen aipatu berri dugun fenomenoan. Ez zen debekatu euskararen erabilera pribatua, baina bai publikoa: erakunde ofizialetan, prentsan, hezkuntzan eta elizan. 1950eko hamarkadan eta bereziki 1960koan gertatutako industrializazioak etorkin gehiago erakarri zituen eta horrek are gehiago murriztu zuen euskaldunen proportzioa. Ipar Euskal Herrian ez zegoen debekurik, baina ez eta inongo aitortza ofizialik ere. Mendearen hasierako hainbat prozesu bizkortu egin ziren eta ez zen geratu euskararen atzerakada. 1948ra arte itxaron behar da Hegoaldean debekua apur bat bigundu eta liburu eta argitalpen gutxi batzuk kaleratzen hasi arte. Indartu egin zen galeraren kontzientzia eta horrekin batera nagusitu zen batasun literarioari buruzko kezka. Euskaltzaindia izan zen, hainbat idazlerekin batera, euskara batzeko prozesuaren bultzatzailea, eta 1968an Arantzazun egindako biltzarra izan zen agertoki nagusia. Ikastolen berragerpena eta ugaritzea garai horretan hasi zen.

## BIGARREN EUSKARA MODERNOA

Iñaki Camino

### 1. SARBIDEA

Aldi luzea da 1876-1968 bitartekoa, ia mende bat osatzen du eta ugari dira garai hartan euskararen izaerari eta bilakabideari eragin zioten errealitateak; zail da aldi hura guztia batasunez lantzea eta guk sarbide honetan gertakari garrantzizko batzuk dakartzagu, atalaren edukia eta hari nagusi bat aurkezteko.

xix. mendean euskarak gibelera egin zuen, Nafarroako geografian bereziki eta baita Araban hein handian ere. Gainerateko euskal lurraldeetan euskararen erabilera gizarte arloan apaldu zen: bertako seme-alaba anitzen aldetik, erdaren oldarraldiaren aitzinean, hiztun gisa arimaz euskal hizkuntzari leialak izan ez zirelako eta honekin batera, kanpotar ugari Euskal Herrira bizitzera etorri zen aldetik, ratio demolinguistikoetan.

Galera eten nahirik, bertako euskaltzaleak hizkuntzarekikoak berrantolatzen eta sustatzen hasi ziren eta *Euskal Pizkundea* deitu izan den sentimendu-mugimendua eraiki-hedatu zuten. xix. mende bukaeran euskaltasunaren halako indarraldi bat sumatu zen, areago 1876an Hegoaldeko foruak galdu ondotik. Autonomiaren galera hark sakon eragin zion euskal kulturari, orduko karlista nahiz liberalek herri nortasunaren halako kontzientzia berri bat hartu baitzuten. Ipar Euskal Herrian ere ez zen mugimendurik falta, xix. mende erdialdean halako euskal apologia giroa zebilen: Agosti Xaho

zuberotarra euskal abertzaletasunaren aitzindaritzat jo ohi da, zazpi euskal herrialdeen ekimen soziopolitikoa zuen ametsa. Jean-Martin Hiribarrenen 1853ko *Eskaldunac* liburuan, mugaz bi alderdietako euskaldunen arteko batasuna eta euskara atxiki beharra aldarrikatzen ziren. Ipar Euskal Herrian abiatu ziren Anton Abbadiak antolatu lehen *Lore Joko* edo *Koplari Guduak* ere (1851). Mendearen hondarreko laurdenean sortu zen *Eskualduna* kazeta Baionan (1887-1944), herri xehea xuri eskuindarren ezagutzaz argitzeko: urte bete lehenago errepublikarrek Pauen sortu *Le Réveil Basque* (1886-1894) astekari elebidunari aurre egin behar zion.

xix-xx. mendeetan Europako zenbait hizkuntzalarik Euskal Herrira jo zuten, euskara ezagutzera edo aztertzera: Willen Jan van Eys, Christianus Cornelius Uhlenbeck…; esaterako, Henri Gavel frantsesak euskal fonetika sakon landu zuen Baionan (1920); honen guztiaren ondorioz, etxean ere hizkuntzalaritzan eta filologian aitzinatu zen: Julio Urkixoren *Revista Internacional de los Estudios Vascos* aldizkariak filologiari mesede handia egin zion (1907-1936).

Euskararen zer nolakoaz kezkaturik, mendearen bukaeran Resurreccion Maria Azkue gazteak *Euskal Izkindea* izeneko gramatika garbitzailea idatzi zuen (1891) eta Sabino Aranak ortografia berrantolatzeko saio bat (1896). Bi pertsonaia handiok haizatu nahi izan zituzten hizkuntza eredu haiek aski urrun zeuden herri xehe euskaldunetik eta oro har gizartetik eta ondorioz, mende hasierako idatzizko euskararen proposamen garbizale edo logikazale haiek ez zuten ondorio sendorik erdietsi. Idatzizko ereduak bilatzeko euskara errealaren alde jo behar izan zuten ondotik euskalariek, eta frantsesaren eta gaztelaniaren morrontzapetik askatutako idazkera edo grafia bateratu bat nagusitu zen hala Iparrean nola Hegoan. Euskararen deskribapenean ere anitz aurreratu zen: Azkuek euskal hiztegia (1905-06), euskal kantutegia (1918-21), euskal morfologia (1925) eta etnografiako bildumak egin zituen (1935-1947).

Gizarteari eta politikari dagokionez, eragile nagusia Bilboko *Centro Vasco* egoitza izan zen: euskal abertzaletasun politikoaren indarraldi gaitzenari bertatik eragin zitzaion. Urte batzuk lehenago, 1877tik aitzinera, Iruñeko *Asociación Euskara de Navarra*-ko kideak izan ziren euskaltasunaren aldeko teorizazioa haizatzen jardun zutenak: Juan Iturralde y Suit eta Arturo Campion iruinsemeak zituzten buru.

Berebat, mende hasieran erakunde euskaltzaleak agertzen hasi ziren: *Euskal Jaiak* antolatu eta euskal kulturaren inguruko agerraldi ugari eratu zituzten, euskal kontzientzia inarrostea zuten helburu. *Euskal Pizkundea* izeneko mugimendua harrotzen ari zen gizartean, guztiz euskal idazleen artean: garai hartan inoiz baino gehiago idazten ari zen euskaraz. Ipar Euskal Herriko gizartean *Eskualzaleen Biltzarra* eratu zen (Hendaia, 1901) eta Hegoaldean *Euskal Esnalea* erakundea (Zumarraga, 1907), izen bereko aldizkaria argitaratu zuena (1908-1931). Garaiko *in crescendo* hartan, bigarren hamarkadan

*Eusko Ikaskuntza* erakundea sortu zen (1918), oro har euskal kultura bultzatu eta ikertzeko; berebat, euskarak baitezpadako zuen amestutako akademia eratzea ere erraztu zuten erakundeetan ugaltzen ari ziren politikari foruzale nahiz abertzaleek: filologo, hizkuntzalari eta idazleek *Euskaltzaindia* eratu zuten (1918).

Ipar Euskal Herrian *Eskualzaleen Biltzarra* arduratu zen euskaldunen adorea biziberritzeaz; hasieran erakunde hau zazpi euskal herrialdeetarako pentsaturik zegoen, baina Iparrean jardun zuen, bidegile eta bide erakusle izan zen: apaizgaien eta irakasleen alfabetatze lana 1913tik eta batez ere 1920tik aitzinera erakunde honek egin zuen, berak barreiatu zuen jende xumearengana tradizioko hizkuntza leialtasuna, Piarres Lafitte gramatikaria edo Xalbador bertsolaria partaide izan zituzten lehiaketak bultzaturik (Zalbide 2003: 127).

Gizartean, euskaltasuna eta euskalaritza indartzenago zihoazen: Gipuzkoan *Euskaltzaleak bazkuna*-k lan guztiz sendoa eta soziologikoki aintzat hartzekoa eragin zuen 1926tik aitzinera, euskara eta euskal kultura folklore hutsetik izaera landuagora eraman nahirik; Bizkaian ere eragin onuragarria izan zuen. Ia 2.000 bazkide zituen erakunde honetan Jose Ariztimuño «Aitzol» apezak hartu zuen lidergoa; otsoak bezala lanean jardun zuen euskal jendeak euskal hezkuntza eduki zezan eta euskal ohiturak ikas eta maita zitzan, baina Espainiako 1936-1939ko gerra zibilaren garaian, Pasaian atxilotu eta Hernanin fusilarazi zuten (1936).

Iparrean, berriz, 1914ko eta 1939ko gerlek euskal populu gehienaren ariman eta gogo-bihotzean halako frantseste bat eragin eta berrindartu zuten; ondorioz, euskarak gizartean erabilera eta onespena galtzen jarraitu zuen, Iparreko hainbat eta hainbat jende eta familiak erdararatzen eta frantsesera lerratzen jarraitu zuten. Hegoaldean 1936-1939ko gerrak etena ekarri zion *Euskal Pizkunde* hari: idazle eta eragile ugarik atzerrira jo behar izan zuten eta Euskal Herritik kanpo argitaratu aldizkarietan idatzi behar izan zituzten beren lanak. Jokin Zaitegi idazle eta eragilea akuilari, 1950etik aitzinera Guatemalan ondu zen *Euzko Gogoa*, garaiko euskal idazle nagusien bilgunea; 1956tik 1960 arte, berriz, Lapurdiko Miarritzetik zuzendu zuen, baina 1960an itzali zen belaunaldi bat baino gehiagoko idazleak biltzea lortu zuen agerkaria. Hegoaldean, katakunba giroan zirauten euskal idazleek ez zuten argitaratzeko aukera handirik; Zarauzko Itxaropena argitaletxeak eratu Kulixka sorta (1952-1973) salbuespentzat jo daiteke: 55 liburu argitaratu zituen.

Hizkuntzalaritzari dagokionez, garai hartan euskal aditzaz René Lafon arduratu zen (1943) eta etxean Koldo Mitxelenak euskal fonologia historikoa ikertu zuen (1961), euskararen barne berreraiketa nazioarteko hizkuntzalaritza bikainenaren estandarretan utzirik. Euskal kultura eta euskal artea *Ez dok amairu* erako taldeek bultzatu zituzten 60ko hamarkadan eta gerra aitzinean bezala, Hegoaldean ikastolak berriz ere euskarazko

hezkuntza eskaintzen hasi ziren. Idatzizko euskararen eredu estandarra lortzeko bilkurak egin ziren Baionan (1963-64), ondotik *Euskara Batua*-ren Arantzazuko 1968ko biltzarra eragin zutenak.

## 2. EUSKARAREN MUGAK ETA EGOERA[1]

### 2.1. Bi hizkuntza handiren artean

Lehen-lehenik adierazpen orokor bat egitea dagokigu: euskara hizkuntza ttikia da, hiztun gutik mintzo dute lurralde aski ttikian; Bizkaian, Araban, Gipuzkoan, Nafarroan, Lapurdin, Nafarroa Beherean, Zuberoan eta Bearnoko Eskiulan; Ameriketan ere badira euskaldun franko, baina bi euskal aldizkariren aurkezpena salbu, ez dugu diaspora aintzat hartuko. Bestalde, XIX-XX. mendeetan euskara bi estatu handirenak diren bi hizkuntza handiren artean kokaturik egon da, Frantzia eta Espainiaren artean; baldintza beretan hizkuntza ttiki bat ez daiteke lehiatu bi hizkuntza handirekin, hainbat funtzio hizkuntza handiari esleitu ohi zaizkio; egoera neutroan funtzioen konpartimentazio aski egonkorra egon daiteke hizkuntza handiaren eta ttikiaren artean, baina aspalditik desoreka izugarria egon da Euskal Herrian bi hizkuntza handi horien alde eta euskararen aurka.

Gogoan izan behar da, bestalde, apez jendeak euskaldunak XVIII. mendeko Ilustrazioaren besoetarik erauzteko eta Errejimen Zaharrari atxikirik edukitzeko tresnatzat ere ikusi duela euskara; arimazaintzarako egoki zen, katixima eta ohitura zaintze jardunerako, literaturako alegiak itzultzeko, baina ilustrazioaren askatasun egarri, gizarte berrikuntza eta antzeko haizealdi modernoen eramaile izateko ez; atzerakoitasunaren estigma hau ere jasan behar izan du euskarak: baserriarekin eta kristau fedearekin batera, gizarte berriaren irudira eraiki den hiriari kontrajarri baitzaio usu euskara, eta ondorioz, modernozale batzuek erreakzio kutsua hartu diote euskarari, kaltegarri gertatu da identifikazio hau euskal hizkuntzarentzat. Esate batera, Ipar Euskal Herriko apez xuri zenbaitek halako identifikazioa ikusi uste izan zuen hiru galeraren artean: a) fede kristauaren, b) gizalegearen eta gizabidearen arau-emaile nagusi Eliza izatearen eta c) euskararen galeren artean.

Euskararentzat —euskal jendearentzat edo euskaraz mintzo ziren jendeentzat, zuzenago esanik— XIX. mendearen hondarreko laurdena eta XX. mendeko lehen bi herenak sasoi zailak izan ziren: portzentaiaren aldetik euskal hiztun anitz galdu zen, Euskal Herriko hango eta hemengo hainbat eta hainbat jende erdararatu zen. Oro har, eskualdeak, ibarrak, herriak, familiak, jendeak deseuskaldundu ziren. Lehenagotik

1. Azpiatal hau idazteko, besteak beste, idazle hauek aintzat hartu ditugu: Agirreazkuenaga (2003), Apraiz (1976), Bonaparte (1869), A. Irigarai (1956, 1974), J. A. Irigarai (1977), Knörr (1998), Reclus (1867) eta Zalbide (2003, 2007a, 2007b).

zetorren galera, izan ere, aspalditik bizi baitziren Euskal Herriko erakunde ofizial gehienak eta anitz jende ahaltsu herri xehearen euskarari bizkar emanik; eskualde anitzetan baserriak euskaldun zirauen, baina egunero entzun zitezkeen handiki eta jende ikasi elebidunak euskal karriketan erdaraz, horregatik, bi galera mota bereizi behar ditugu:

- euskarak eta erdarak ukipena zuten lekuetako galera geografikoa, Nafarroa Garaiko erdialdean, Arabako iparraldean nahiz Bilboaldean gertatu zena eta
- bi hizkuntza lehiakideren konpartimentazio soziofuntzionalari dagokionez, Euskal Herriaren barreneko gizarte edo estatus galera euskararentzat

Egin dezagun halako sarrera llabur bat Erdi Arotik XIX. mendea bitarte euskarak gibelerat izan bilakabidea aurkezteko.

Iraganean Iruñeko Gortea goiz erdaldundu zen eta Goi Elizak ere eragin erromanizatzailea ukan zuen. Erdi Arotik Aro Modernora iragatean Euskal Herrian emeki-emeki sortuz joan zen burgesiak merkataritza hartu-eman hertsiak eduki zituen kanpoko burgesekin. Erdarak indarra eta eragina izan zuen, hirietan bereziki: Baionak Europarekin merkataritza hartu-eman indartsua zuen eta gaskoia hizkuntza arrunta zen hiri honetan. Iruñean frankoek merkataritzan garrantzi handia izan zuten eta Lizarran, Zangozan nahiz Tuteran kanpotar ugari zebiltzan salerosgoan. Gasteizek hartu-eman hertsia ukan zuen Gaztelarekin, bai Gortearekin, bai administrazioarekin eta bai hango merkatariekin; Andrea Navagiero diplomatiko humanista italiarrak dioskunez, XVI. mendearen lehen laurdenean Gasteizen erdaraz egitea gauza arrunta zen. Gizartean nagusitasuna erdiesten zuten gizamailek ez zuten euskara baliatzen: Elizak, erakundeek, zuzenbideak, merkatariek… erdarak baliatzen zituzten eta honen ondorioz, euskara ez zen idazten, ez zegokion goi mailako edo kultura arloko eginkizunik.

Gaztelarrek Nafarroa konkistatu izanak, Espainiaren jokaera zentralistak eta Frantses Iraultzak erdaren alde eta euskararen aurka jo zuten. Espainiako koroak eta burgesiak estatu espainiar batua bultzatu zuten eta administrazioan eta erakundeetan ez zen euskararen arrastorik ageri. Denborarekin beharrezko bihurtu zen eta emeki-emeki jende ia guztiengana iritsi zen eskola ere, euskararen kaltetan erdara bultzatzera etorri zen, hala Ipar nola Hegoan. 1764an Hegoaldean sortu eta euskal kultura nahiz euskal nortasun politiko berria bultzatu zituen *Real Sociedad Bascongada de los Amigos del País* zientzia erakundeak sinbolikoki euskararen alde jardun zuen, baina bere ikerketetan erdara baliaturik. Garai hartako euskal jende ikasi batzuek egiten zuten euskararen apologia ez zen hutsaren hurrengoa, baina inolaz ere, erdaren oldarra indartsuagoa zen. Maila gorako Hegoaldeko euskal pentsalari gehienek ikurtzat baliatzen zuten euskara, ez zen euskal eliteak komunikatzeko baliatzen zuen hizkuntza, enblema zeregina zuen gehiago.

Industria-aurreko arotik industrializaziora iragatean, Euskal Herriaren erakundetze politikoa gauzatuz joan zen, baina zatiketaren bidetik, inolako erakundek euskara bere hizkuntzatzat hartu gabe. Menpekotasun giro hartan, euskarak gibelerat jo zuen hiri hazietan nahiz nekazari giroko erdararen ondoko periferia geografikoetan. Produkziobide nagusien inguruko erabakiguneetara heltzeko erdara gauza beharra zuen nonahiko euskaldunak, eta erdal produkziobide emankor anitzetarik beren burua kanpo ikusirik, euskaldun xeheek halako konplexu edo lotsa bizi zuten euskaragatik eta beren sortzezko hizkuntza baztertzea ondorio ezaguna da euskal periferia geografiko guztian. Giro honetan erdarekiko hartu-eman edo ukipenak periferian kalte handia egin zion euskarari Hegoaldean; berebat, euskal gizartearen barrenean, ordura arte euskaraz mintzatzen zen hiri hazietan ere gibelera jo zuen. Agustin Pascual Iturriaga apez eta pedagogo hernaniarrak Gipuzkoako Batzar Nagusien eskariz 1830ean idatzi txosten ofizialean euskara galbiderat laster zihoala adierazi zuen: *camina con m*ás celeridad hacia su perdición; Lardizabalen gramatikaren aitzinsolasa idatzi behar izan zuen Gereka izeneko funtzionario batek ere, euskara azken hatsetan zela idatzi zuen 1856an, Gipuzkoan idatzi ere: *la lengua vascongada está casi tocando a su fin* (ik. 7. kap., § 1.2).

Euskara, arrantzale, abeltzain eta nekazarien eguneroko gizarterako gelditu zen eta emeki-emeki nagusitzen ari zen mundu industrialean indarra galduz zihoan: ez zen ageri erakundeetan, irakaskuntzan edo auzitegietan eta gibelka zihoan produkzioan eta merkatuan. Bestalde, XIX. mendearen bukaera aldean industriak kanpotar erdaldun ugari erakarri zituen Hego Euskal Herrira, bereziki Bilboko eskualdera eta ondorioz, portzentaietan euskarak indarra galtzen jarraitu zuen.

### 2.2. Galera geografikoa

Alderdi geografikoari begiratzen baldin badiogu, aise ikusten da 1875-1968 bitarte hartan, Bizkai ia guztiak, Gipuzkoak, Lapurdik, Nafarroa Behereak eta Zuberoak ez zutela eskualde euskaldunik galdu, baina ezin esan daiteke hori Nafarroa-Arabez edo Bilboko alderdiaz: herrialdeotako ibar batzuek euskara guztiz edo ia guztiz galdu zuten garai hartan. Campion idazlearen 1917ko *El último tamborilero de Erraondo* ipuinak ederki erakusten du XIX. mendean Nafarroako barnealdeko ibar bat osorik nola erdararatu zen, hizkuntza galtzeak nola eragiten duen hainbat balio kultural nafar galtzea. Élisée Reclus frantziarraren 1867ko *Les Basques. Un peuple qui s'en va* iruzkin erromantikoak islatzen du, euskal hizkuntza, bertako ohitura zahar franko eta beste hainbat eta hainbat errealitate etnografiko aldapan beheiti abiaturik zeudela orduko Euskal Herrian.

Arabako euskararen garai hartako egoera ulertzeko, ordu arteko mendeetan euskarak jasan gibelamendua aintzat hartu behar da. Ezaguna denez, XVIII. mendean Arabako

lurraldearen iparreko erdia euskaraz mintzo zen eta Gasteizen hegoaldeko alderdiko hainbat eskualde ere euskaldunak ziren; ordea, 1850ean Arabako iparraldeak baizik ez zirauen euskaldun, Arabaren bosten bat zen hori, hala lurraldean nola bizilagunetan. 1850-70 bitartean Louis-Lucien Bonaparteren gutunetan hainbat berri aurki daiteke euskararen galeraz; oraindik ere euskal hiztunez hustu gabe zeuden hainbat ibar Arabako iparraldean, baina XIX. mendearen hirugarren hereneko datuek itzuli gaitza egin zuten.

XX. mendean Araba iparraldeko herri euskaldunak emeki-emeki erdararatuz nola joan ziren erakutsi zuen 1950ean Odon Apraiz gasteiztarrak (1976: 27-32). 1880. urtean Gasteiz ondoko Gamarra eta Miñao erdaldun ziren, baina Luku eta Urbina ez. XIX. mendean Arratzua-Ubarrundian euskara galdu zen, Betolatzan eta Ziraon, Uribarri Ganboan eta Lukun; Urbinan 1913an baziren euskaldunak, baina 1950ean ez. 1917an, Landa, Marieta, Larrintzar eta Elgean euskara azken hatsetan zen; baziren euskaldunak, baina hauetarik batzuk gipuzkoarrak ziren, bertara ezkonduak. Bestalde, Gipuzkoako baserrietarik inguru honetara gaztelania ikastera igortzen zituzten mutil gazteak: badakigu Uztapide bertsolariak Zurbaon artzain zebilela *mintza praktika* egin zuela. Lerro honetako gainerateko herrietan Apraizek erdara baizik ez zuen entzun 1917an: Ozeta, Hermua, Larrea, Axpuru, Narbaxa, Arriola, Gordoa eta Galarretan. Zalduondoko euskaldunak sortzez zegamar-ataundarrak ziren edo bestela, Goierriko senitartekoekin Gipuzkoan aldi zenbait iragan zutenak.

1920-25. urteen garaian Zigoitian euskaraz egiten zen, Gopegi, Manurga, Murua, Eribe, Zestafe, Akosta eta Etxaguenen. 1950ean Manurga, Gopegi eta Eribe erdaldun ziren, baina Akostan baziren euskaldunak eta Etxaguen eta Zestafen ere hondarreko euskal txingarrak aurki zitezkeen. Zuian 1950ean ez zegoen euskaldunik, baina Baranbion bai eta badirudi Luiaondon ere bazela norbait. Laudion, berriz, Bizkaiko mugako baserrietan eta Orozko hurbil duen Areta auzoan zeuden euskaldunak. XX. gizaldiaren erdian Legutiok euskaldun zirauen eta Nafarrate, Elosu eta Urrunagan euskara entzuten zen. Ordea, eskuin, ipar-ekialdeko Araba erdaldundurik zegoen zeharo 1950ean.

Gure sasoiaren bukaera egiten duen 1968 urtearen inguruan, Laudioko Areta auzoa, Orozko ondoko Baranbio, Zigoitia ibarreko Etxaguen, Murua, Akosta, Ondategi eta Zestafe, Legutio ibarreko Nafarrate, Urrunaga, Elosu nahiz Legutio-Bilerle dira tradizioko euskaldunak zituzten gune bakarrak. Egun ere euskaldun dirauen Aramaio ez da atzendu behar.

Bizkaiko datuen berri Uriarte fraide frantziskotarrak Bonaparteri igorri gutunetarik atera dezakegu. Garai hartan Portugalete erdalduna zen, baina Bilbo hiria elebiduna. Bilboko euskarak kritikak jasan ditu idazleen lumatik: erdarak nahasirik zegoela, hilabete izenak erdaraz bezala esaten zituztela… (ik. 7. kap., § 1.2.1). Hiriaren eskualdeaz ziharduela honela ziotson Uriartek printzeari 1864/V/16an: Barakaldon Regato eta Retuerto auzoetan

erdaraz egiten zela, baina Beurio, Burzeña, Irauregi eta Landaburu auzoetan gehienak euskaldun zirela, gazteak zirela euskaraz ez zekiten bakarrak. San Vicente auzoan bazirela euskaldunak, baina gehienak erdaldun zirela. 1866/IV/23an Barakaldora jo zuen Uriartek eta Landaburun eta Beurion euskara anitz egiten zela ohartu zen eta San Vicenten zerbait; ziotsonez, Retuerton eta gainerateko auzoetan ia ez zen euskara ezagutzen. Bestalde, Olabeagan, Deustuan eta Zorrozan euskaldun zirela adierazi zion, nahiz erdara anitz mintzatzen zen. Berebat, La Campa eta Areeta ez zirela hiru etxe baizik, eta euskaldun zirela. Arrigorriaga aldean, erdara Bilbo aldera jotzen duten lekuetan egiten zela, Atxurin eta Bilbo zaharrean; gaineratekoan, Bolueta, Venta Alta, Madariaga, Agirre, Artundua, Illunbe eta Ibaizabal osoki euskaldun zirela (ik. 7. kap., § 1.1.3).

Nafarroari dagokionez, Bonaparte printzeak herriz herri egin bidaia eta bildumei esker, XIX. mendearen hondarreko herenean euskararen hegoaldeko marra ezarri ahal izan zen (ik. 7. kap., § 1.1.2). Ondotik, 1904ko Iruñeko eliz-agiri batzuetan esplizituki adierazi zen euskararen hegoaldeko eskualdeetako zein herri edo ibarretan mintzatzen ziren jendeak euskaraz.[2] Datu horien arabera, badakigu 1860-70etik 1904 bitarte zein ibar eta zein herri erdararatu ziren: Orbaibar, Elortzibar, Tebas, Izarbeibar, Mañeruibar, Girgillao, Gesalatz, Jaitz, Etxauribar, Itza, Antsoain, Zizur, Galar, Iruñe ondoko Uharte eta Atarrabia, Aranguren, Ibargoiti, Untzitibar, Itzagaondoa, Lizoainibar, Urrotz, Agoitz, Longida eta Urraulgoiti.

Aldiz, XX. mendearen hasieran honako ibar eta herrietan euskaraz egiten zen: Goñerriko, Olloibarko eta Oltza zendeako herri batzuetan. Gulibar, Txulapain, Odieta eta Olaibarren. Ezkabarteko eta Eguesibarko herri batzuetan. Esteribar, Arriasgoiti, Artzibar, Orotz-Betelu, Auritz, Orreaga, Aezkoa eta Zaraitzun. Erronkari ibarrean, berriz, herri gehienetan.

Aingeru Irigarairen 1935eko datuetan oinarriturik 1904an euskaldun zirauten bost ibar erdararatu zirela dakigu (1956): Goñerria, Olloibar, Oltza, Eguesibar eta Arriasgoiti. Erronkaribarren, Urzainki, Bidankoze eta Erronkariko zaharrak euskaldunak ziren 1935ean eta baita Izaba eta Uztarrozeko jende anitz ere. Egoera makurrean aurkitu zuen euskara Ezkabarteko Soraurenen, Olaibarren oro har, Atezko Arostegin, Txulapaingo franko herritan eta Arakilen. Nafarroako erdal-herritik iparrerat so eginez eta ñabardurak ñabardura, euskaldun zirauten Zaraitzu, Aezkoa, Auritz-Orreaga, Orotz-Betelu, Artzibar, Erroibar, Esteribar, Ezkabarte, Odieta, Anue, Atetz eta Gulibar ibarrek.

Pedro Irizarren 1972ko datuen arabera, ia guztiz erdaldundurik zeuden Arakil, Gulibar, Txulapain, Ezkabarte eta Olaibar ibarrak. Odietan baziren ale batzuk herri frankotan eta Artzibarren kasik galdurik zen. Ipar Esteribarren eta Ipar Erroibarren

2. Guía eclesiástica y estado del personal del Obispado de Pamplona en 1º de septiembre de 1904.

euskaldun bakan batzuk aurkitzen ziren herri gehienetan eta Auritzen eta Orreagan ere baziren ale batzuk. Aezkoako herri gehienetan hiztun multzo bat zegoen, Ariben, Garaioan eta Abaurrepean izan ezik. Zaraitzun hiztun guti gelditzen ziren eta Erronkarin ere ia gehienak hilik ziren, nahiz Izaba-Uztarrozeetan ale bakan gelditzen zen.

## 3. BESTE HIZKUNTZAK

Arestiko atalean euskarak geografian jasan zuen abailtzea aurkeztu dugu, baina ez dago adierazi beharrik hizkuntza batek galtzen duen erabilera beste batek ala beste batzuek harrapatzen eta neutralizatzen dutela eta gure kasuan, frantsesa edo gaztelania dira euskararen ohiko hainbat zeregin emeki-emeki bereganatu eta irabazi zituztenak: hizkuntza ordezkapena gertatzen ari zen.

Pirinioetako Erronkariko ibarrean utzi dugu haria arestian. Bertan euskara gaztelaniak nola ordezkatu zuen eta Ipar Euskal Herrian frantsesa nola aitzinatuz zihoan adierazi zuen Hazparneko idazle Jean Hiriart-Urrutik 1896an, orduko Euskal Herrian jende zaharrak baitziren bakarrik beti euskaraz mintzo (2004: 331):

> Arronkal eta Izaba. Bertze orduz hango egoiliarrak oro eskualdun garbiak ziren. Orai aldiz ezin gehiago nahastikatuak dire. Aitaso-amasoek ez dakite eskuaraz baizik mintzatzen; berrogoi urtetako burasoak erdizka mintzo dire: zaharrekin eskuaraz, gazteekin españolez. Gazteak aldiz, eta bereziki haurrak españolez baizik ez dakite mintzatzen. Nere adiskideak zion etxe berean ikusi zituela horrela mintzo, adin arau; zaharrak eskualdun, bitartekoak eskualdun-español, gazteak (eskuara utziz) español garbi… Datozila español-eskualdunak mendiez hunaindirat: guk heientzat bezenbat erraiteko badukete heiek guretzat. Ezen gutartean ere ondikotz ikusgarri bera dugu begien aitzinean: zaharrak dire bakarrik beti eskuaraz mintzo. Bitarte adinekoak erdi eskuaraz, erdi frantsesez.

### 3.1. Frantsesa eta gaztelania gizartean indartuz

Alderdi geografikoetan erakutsi dugun erdararatzearen oinarrian hizkuntza erromanikoek eta euskarak aspalditik zeukaten elkarrekiko ukipena dagoela ezin uka badaiteke ere, euskal mintzairaren galbidearen sakonean politika eta gizarte arrazoiak daude: non eta ez zuten gaztelania edo frantsesa ikasten, goranahi ziren euskaldunek ezin goiti jo zuten gizartean. Frantzia eta Espainia estatuetako hizkuntza handi horietan behar bezala moldatzea, hizkuntza horiek ongi ikastea eta baliatzea gauza beharra zen gizartean nor izateko, lanbide egoki edo erosoa eskuratzeko. Marzelino Soroaren 1886ko *Baratzan* antzerkiak argi adierazten du:

—*Emen etorri da kaballero euskeraz dakiyen ura.*
—*¡Euskeraz dakiyena! ¡Euskeraz dakiyena! ¿Ta zer uste dezu zuk, ez dala kaballerorik euskeraz dakiyenik?*
—*Bai bañan ez diruri. Aiñ guchi azaltzen dira emen… Ta neri gustatzen zait.*
—*¿Kaballerua?*
—*Euskeraz jakitia.*

Frantziak eta Espainiak erabaki politikoa jakinaren gainean harturik zeukaten: hizkuntza «baliagarriak» frantsesa eta gaztelania dira; euskaldun bati euskarak ez zion ohiko arrantza, nekazaritza edo abeltzaintzatik bizi ahal izatea baizik bermatzen, edo industrian eskulan izatea; euskaldun huts elebakarrak tradizioko zokoetan iraun zezakeen, baina gainerateko jardunetara inguratzeko, erdara bat baliatzea baitezpadako izaten hasi zen Ipar nahiz Hego Euskal Herrian.

Eskolak haurrei gogoan gaztelania sarrerazteko euskara baztertzen zuela eta, kexu agertu ziren Manuel Larramendi XVIII.ean eta Iturriaga pedagogoa XIX.ean. Euskara baliatzea galeraztera eta zigortzera heldu ziren administrazioak. Hego Euskal Herrian eskola ofizialak euskara baliatzea zigortzen zuen: eskolan euskaraz mintzatzen harrapatzen zuten ikasleak eraztun bat hartzen zuen eta ez zuen zigorra gainetik kenduko, arik eta euskaraz mintzatzen harrapatzen zuen beste gaztetxo bati eraztuna «eskaini» arte; aste hondarrean eraztuna zeraman gaztetxoak bazekien zigorra zain zuela; dena den, zigor hau Gipuzkoa barreneko administrazioko euskal jendeek ere bultzatzen zuten: ez zuten beste biderik ikusten herri xehea Espainiako mintzora lerra zedin, mintzaira hau tajuz ikas zezan (ik. 7. kap., § 1.1.1 eta 1.2.2). Felipe Carretero euskal sozialistak ere pairatu zuen egoera hau: eskola publikora zihoan Aulestiko Murelagan 1873. urte aldera eta eraztuna baldin bazeraman, maisuak zaplastekoka zigortzen zuen. Ipar Euskal Herriko XX. mende hasierako berri, Lapurdiko Hazparnekoa, Emile Larrek eman zuen 1992an:

> …ikusia zuen jaun errientak euskaraz ari zirela haurrak eskolan elgarren artean, etxean bezala: gaztigu gisa, xiri ttipi bat emaiten zitzaion euskaraz mintzo aurkitua zen haurrari eta gaztigatze haundiago bat bazeukan ondotik haur gaizoak… non ez zuen haur hark beste «hobendun» bat kausitzen, euskaraz mintzo zena. Orduan hari sakatzen zion harrapatua zenak bere «anti» madarikatua. Molde horretan haurrak berak zituzten poliza lan batean ezartzen, elgarren salatari eginez, euskara «galgarri» horren kontra: lan higuin eta iluna beraz hori ainitz eskualdetarik. Zenbaitek bakarrik zuten ordukotz ikusten, etorriko zirela egunak, uste baino lehen menturaz, haurra bere herriko mintzairaz ahalgetuko baitzen holako bidetik.

Euskara ez zen idazten eta ez zen kultura hizkuntzatzat jotzen, ez kanpoan eta ez etxean ere. Sasoi hartako Euskal Herriko gizarte-bilakabideak eta hiri eta herri hazietako

jendeen jokaerak ezagun dute hori. Pierre Broussainek adierazi zuen zein zen maila gorako euskaldunen hizkuntza-joera (1913): *Eskualherriko jende handiek, miiku, aphez, notari, abokat, aspaldian eskuara utzi'ute frantsesez edo españolez artzeko, eta hek bezala iteko, jende xehiak ee ai dia frantsesez edo españolez mintzatzen, ahal dutenian.* Goi maila edo arloetan euskararentzat iraupena horren zail izatearen ondorioa zen maila apaleko jendeek ere hein batez euskara gaitzetsirik erdaraz mintzatzera jotzea, Hiriart-Urrutik 1896an salatu bezala (2004: 331-332):

> Gazteriak ere badauka oraino hein bat eskuara. Frantses hortan trebe dela erakutsiz geroz, nahiago du eskuaraz mintzatu gutartean hogoi, hogoita hamar urtetako gizon gazteak. Handik beheitikoak lerrakorrago dire frantses hortarat. Bainan haurrak? Haurrak asko tokitan osoki frantseserat eroriak dire. Ala frantses polita derabilate mihietan! Zer nahuzue ordean, uste badute *jaunago* direla eskualduntasuna utzirik franximan bilakatuz?

Garai hartako idazleek euskaldunen axolagabekeria saminki salatzen zuten, ahoan bilorik gabe. Felipe Arrese Beitiak Bizkaiko berri dakarkigu 1879an: *geure erruz bada ekarri dogu / eriotzako unera / berbeta eder, gozo ta leun au / beste munduko atera*. Lizardi gipuzkoarrak, berriz, amets txar bat egin zuela diosku, *yaun illezuri agurgarri batzuk* zekuskiela *euskel-iztegi bikain bati azkenorraztuak egiten, euskera ordurako illa ta lurperatua zanik oartzeka*. Hiriart-Urruti hazpandarra ere kexu zen 1897an: *Guhaur; gu gira eskualdunak guhaur eskuararen etsai; eskuararen galerazle*; honela zioen (2004: 337-338):

> Galtzen dugu eskuara, edo galtzerat uzten guhaurek eskualdunek. Arrotza orotaz emeki-emeki nausitzen ari zauku. Eskualduna ez da gehiago ez bere lurren, ez bere haurren ez eta ere askotan bere buruaren jabe Eskual Herrian. Gure bideak, etxeak, bazterrak oro bizardun, kaxketadun… nork daki nor, eta zer, eta nondik huna jin batzuez beteak ditugu. Urrats bat ez dezakegu egin Donibane-Ziburuko itsas hegitik Santa-Garaziko mendi-zokoetaraino, jaun eta andre franximant zenbaitekin buruz-burutu gabe.

Beharrezko eskola eratu, ezarri eta finkatu zenetik, Euskal Herriko ikasguneetan erdara baliatzen zen. Euskal haurrek ez zuten beren sortzezko hizkuntzako hitz altxorra aberasten, ez zuten hizkera molde jasoan egiteko aukerarik. Ordea, herri gehienetan eskolaz kanpo herriko lagunartean eta etxean jendeek euskaraz egiten zuten, erdararen muga-mugan ez zeuden euskal herrietan, bederen, honela zen, baina hiri eta herri hazietan, estatu frantsesak eta espainiarrak, euskaraz mintzatzeko gai ez ziren administrazioko elementuak sartu zituzten emeki-emeki eta ondorioz, goi mailako hizkuntza-prestigioa erdarei zegokien. Euskarari tokiko prestigioa zegokion, etnizitate arlokoa, lagun eta

kide hurbilekikoa, *in-group* delakoa. Esate batera, indartuz zetorren liburu generikoa frantsesez zen gehienik Ipar Euskal Herrian, jendearen hain gogoko ziren elaberriak-eta, frantsesez zetozen, kultura berri orokorraren zabalkundeak frantsesaren alde jotzen zuen, ez euskararen alde: frantses itsaso hartan euskarak bere lekua eta zirrikitu batzuk bilatu behar zituen.

Gizarteko aldaketek ez zioten euskarari mesede egin: esate batera, Ipar Euskal Herrian 1850-1890 bitartean, alderdi ekonomiko, tekniko eta kulturaleko aldaketek frantses kutsua zekarten oro har, baina horrezaz landa, emigrazioak ekarri zuen aldaketa demografikoa aintzat hartu behar da. Barreneko herri ordura arte guztiz euskaldunak husten hasi ziren, Lapurdiko itsasaldera jotzen zuten, hain zuzen ere euskalduna ez zen jende ugari bizi zen alderdira. Ameriketara ere gogotik jotzen zuten gazte euskaldunek lan bila; 1832-1843 artean 8.174 euskaldunek jo zuten Montebideora, Iparreko populazioaren 1/20 egiten zuen horrek.[3] Halaber, Maule, Hazparne eta Donapaleura jende ugari joan zen bizitzera, baina hiri hauetara jo zuten guztiak ez ziren euskaldunak. Euskara hutsezko harreman-sareak ahulduz zihoazen frantses mintzoko jendea ugaltzearekin, izan ere, gizartean aitzinamendua frantsesak baitzekarren: ibilbide ekono-teknikoan murgiltzen zen euskaldunak frantsesa behar zuen baitezpada eta erdal gizarte modernoa nagusituz zihoan Ipar Euskal Herrian: Broussainek 1913an Rudolf Trebitsch austriarrari ziotsonez, euskara galtzen ari zen Hendaian, Donibane-Lohizunen, Ziburun, Donapaleun edo Maulen: *hiri horiitan badia haur frango, aitamak eskualdunak tiuztenak eta eskuara eztakitenak. Gure arbasuen mintzaia eskoletan iakats balezate, elitake holakorik gerta.*

Hizkuntzen soziologiaz eta ukipenaz dihardaten nonahiko ikerlanetan irakurri ohi dugunez, egoera ez zen egonkorra hizkuntzentzat, gizarteko goi mailetako eragileek etengabe euskararen aurka eta erdaren alde jo zuten. Guhauren etxean entzunik gaude izeben ama Igeldokoak biziko bere azken urteetan errepikatu ohi zuena: *euskera galtzen ikustia beste penik eztakat*. XIX. mendeko Donostia ondoko emazteki baserritar kaletartu baten kexua da hau, hizkuntza leialtasunez oretua, sinbolikoa, sentimenduen bidez norberaren barren-barrenetik aterea. Bazen Donostian elite euskaltzale bat XIX. mendearen bukaeran eta XX.aren hasieran, baina funtzionaltasunak, gizarteko gora-behera ekono-teknikoek eta erabaki politiko zenbaitek eragin zuten hiri honetan ere XX. mendean euskarak hainbat familiatan gibelerat gogorki jo izana eta haren lekua gaztelaniak hartua. Honela zioen Pepe Artolak (1901): *bildu gaitian bada euskaldun*

3. Odoluste gaitza eragin zuen emigrazioak Ipar Euskal Herrian XIX. mendean. 1867/VII/29an Emmanuel Intxausperen iloba bat Hego Ameriketara nola joan zen aipatu zion gutun batean Bonaparteri zunharretarrak, printzearen hizkuntza-galdetegiari Atharratzen erantzun zion hura, hain zuzen ere.

*guziyak / aberats ta pobreak aundi ta txikiyak / sendatu zaizkiyogun Amari zauriyak / estali bere sustrai erdi ageriyak / eta kendu barrengo estura larriyak.* Gipuzkoan baziren garai hartan herri gehiago erdara indarra hartzen ari baitzen: Lizardi kexu zen Zumarragan euskal jendeak erdara baliatzen zuela, eta garai hartan hein batez industria indarrean zegoen herri hartan, Irunen edo Eibarren bezala. Arturo Campionek 1903ko Lore-Jokoetan langile eibartar batzuen ikuspegia salatu zuen: gaztelaniaz ez zekitelako mintzo ziren euskaraz, nahiagoko zuketen gaztelaniaz mintzatzea, baina ez ziren gai; erdara zen hizkuntza nagusia, prestigioa eta ofizialtasuna zituena. Bestalde, Espainiatik emigrazioan etorri jende gehienak Bilbo ezkerraldeko lantegietara edo eskualde hartako mehazgintzara jo zuen, eta ez da atzendu behar, lehendik ere Bilbo hiriburuan erdaraz egiteko ohitura arras barreneraturik zegoela.

XIX. mende bukaerako Bilboko erdarak Donostiakoak baino nortasun handiagoa zuen, zaharragoa izanik errokatuago baitzegoen; hainbeste, non Joan Corominasek *Diccionario Crítico Etimológico*-ra bildu baitzituen Emiliano Arriagaren Bilboko gaztelaniazko hitzak, 1896ko *Lexicón bilbaíno*-tik harturik: *alcordar* 'acordar'*, alcuerdo* 'acuerdo', *arlote* edo *armosar* 'almorzar' dira Arriagak dakartzan hitz berexietarik batzuk.[4] Iduriak dira Nafarroarako José María Iribarrenen *Vocabulario navarro* (1952), Federico Baraibarren *Vocabulario de palabras usadas en Álava y no incluídas en el Diccionario de la Real Academia Española* (1903) eta Gerardo López de Gereñuren *Voces alavesas* (1958). Jakina denez, aldi hartan gaztelaniaz baliatzen ziren hitzak ditugu, baina euskal substratua ezagun du hiztegiotan guztiotan.

Orduko Ipar Euskal Herrian frantsesez egiten zen formaltasuna zerion oro, idatzizko gutunak barne. Goi arloak, administrazioko zeregin guztiak eta jendaurreko ekintza publikoak frantsesak bereganatu zituen. Gizarteko goi mailan euskal hizkuntzak izan indar bakan hura galbidean zihoan, herriburu eta hirietan mintzaldaketa fite frantseserat lerratuz zihoan eta herrixketara heltzen hasi zen frantsesa, euskaldun hutsen eremuetara, baserri girora, mendialdera, emeki-emeki izanik ere.

Ipar Euskal Herrian eskola frantsesez zen, ikastetxe bat bera ere ez zegoen euskara baliatzen zuenik, baina katixima euskaraz egiten zuten apezek herrietan, nahiz eliza batzuetan frantsesa ere sartua zen. 1902. urtean Parisen lege bat ezarri zuen Emile Combes-ek herrietako apezek egiten zuten katixima debekatzeko; Bretainian apezei

4. Ezaugarri gehiago ere aipa daiteke: gaztelaniazko /θ/ txistukari hortzarteko igurzkaria beharrean «s» apikaria erabiltzea: *haser* 'hacer'; euskaraz legez aditz honekin eratu hitzak: *haser chis* 'piza egin', *haser chalos* 'txalotu', *haser mañas* 'negar egin', *haser risas* 'irri egin'; *-txu* atzizkia har zezaketen erdal hitzek: *hijochu*; ez zen hitz bukaerako *-d* ahoskatzen: *verdá, igualdá*. Genero aldaketa gertatu zen: *la alfiler, la asúcar, la reuma, la vinagre, la pes, la cólera, el chinche, el sartén, el fuente, el canal, el lente*.

soldata kentzeko mehatxua egin zien baldin bretainieraz mintzatzen baziren. Garai hura zalapartatsua izan zen Frantzia guztian xurien eta gorrien artean, Elizaren eta gobernuaren artean: Frantzian ez zen bakerik izan. Gobernamendu zentralak irizten zion Eliza katolikoak bereak ez ziren eginkizunak hartzen zituela; errepublikazaleen ustez, estatuari zegokion haur eta gaztetxoen heziketa. Apezek zeuzkaten irakaskuntza-erakunde eta egiturak, heziketarako izan beharrean, beren erlijioa hedarazteko baliatzen zituztela uste zuten gorriek. Zalaparta eta zatiketa ideologikoaren garai haietan, Ipar Euskal Herriko kultura herritar euskarazkoan bi talde nabarmendu ziren: kopuruaren aldetik gehiago ziren ikuspegi eskuindarreko xuriak batetik, eta bestetik ikuspegi ezkertiarreko gorriak. Frantzia katolikoa, Eliza eta euskaltasuna goresten zituen Zaldubi euskal idazle lapurtarrak gogor idazten zuen errepublikaren aurka.

Frantses estatu zentralistak eskola laikoa bultzatu zuen, frantses hizkuntza ezartzen eta euskara galerazten zuena; euskaldun apezek hizkuntzaren eta fedearen alderdietarik kritikatu zuten ekimena. Martin Landerretxek 1910ean zioenez, a) *euskara semenario handitan irakatsia izatea* eta b) *Euskal-Herri guzian, bai euskara ahanzterat utzia duten herrietan ere, eskoletan edo eskoletarik kampo, erdararekin edo erdara gabe, euskara irakatsia izatea* gauza beharra zen, baina Lehen Mundu Gerra hasteak honelako eztabaidak bigarren mailara eraman zituen; azken buruan, mehatxaturik sentitzen zen estatu frantziarra babestera joan ziren indar eta eginahal guztiak; ik. Hiriart-Urrutiren *Biba Frantzia* artikulua: *biba Frantziako populuaren bihotza!* (1914/IX/11).

### 3.2. Okzitanieraren berri: gaskoia

Okzitaniera hizkuntzak hiru aldaki ditu —aldi zaharragoetan *probentzera* ere deitu izan da—: iparrekoan Limòtges (Limoges), Auvèrnhe (Auvergne) eta Alpeetako mintzoak daude; hegoan probentzera (Marsiho - Marseille) eta langedokera (Tolosa) mintzatzen dira; hirugarren aldakia gaskoia da, Pauen, Bordelen edo Baionan mintzo dena; ezaguna denez, Kataluniako Val d'Aran-en (Lleida) ere egiten da.

Ipar Euskal Herriaren gaineko eta eskuineko alderdia gaskoiez mintzatu izan da. Ekialdean, Zuberoako mugan bearnesa egiten da, zeina berez gaskoiaren aldaki bat baita. Okzitanian baziren gure aldian okzitanieraz baizik mintzo ez ziren jendeak, elebakarrak, baina 1940 aldera hirietan galtzen hasi ziren hiztun elebakarrok eta Diane Dansereauk dioenez (1992: 191), ez da gehiago honelako jenderik gelditzen. Bigarren Mundu Gerra artean, frantsesa, eskolan, elizan, hirian eta kanpotarrekin baliatzen zen, baina etxean, adiskideekin edo baserri giroan okzitaniera. xx. mendearen hasieran, Lapurdiko Basusarri edo Hiriburuko jende gaskoiek eskolan ikasten zuten frantsesa, baina Jean-Baptiste Darricarrèreren 1904ko berrien arabera, Baiona ondoko haur euskaldun

eta gaskoiek fransesa zekiten edo aski ongi ikasten zuten. Gizarte estatusaren aldetik, hiztun okzitaniarren kontzientzian frantsesa baino maila apalagokotzat jo izan da gerora beren hizkuntza eta bereziki emaztekien artean, *patois*-tzat, landu gabeko mintzotzat. Egun hainbat eta hainbat tokitan galduz doa ahozko ohiko okzitaniera, ez zaie haurrei transmititzen, giro akademikoetako okzitaniera estandarra gelditzen da.

Euskal Herriko eskualde batzuetan badira jende gaskoiak, esaterako Baionan, Miarritzen edo Angelun; Baionan euskararen aldean gaskoia historikoki hizkuntza nagusia izan da. Baionako merkatura beren gaiak saltzera edo abere tratura zihoazen lapurtarrek ere gaskoiez mintzatzen zekitela diotso Darricarrèrek Vinsoni 1904an; Miarritzera zihoazen lapurtarrek beren artean euskaraz egiten zutela, baina miarriztarrei gaskoiez egiten zietela. Baionako mintzoaren ezaugarri bereziak Pierre Rectoran-en *Le gascon maritime de Bayonne et du val d'Adour* (1996) lanak eta Gavelek zehaztu dizkigute.[5] Baionako mintzamoldea, 1816an sortu Justin Larrebat olerkari baionesaren *Poésies gasconnes* lanean aurki daiteke (1868), baina olerkari baiones gehiago ere badira gaskoiez idatzi zutenak: Delbreuil, Laborde, Lagravère, Lesca, Oiarzun, Rectoran.

Badira, bestalde, migrazio handia jasan duten kokaguneak Ipar Euskal Herrian: Baxenabarreko Bastida herria mugako gotorleku gisa eraiki zen Erdi Aroan eta historikoki Frantzia hegoaldeko hainbat jende kokatu da bertan; aztertzen dugun garaian nagusiki gaskoia mintzatu dute bastidarrek, nahiz herriko karrikan eta Kosta auzoan euskaldun batzuk bederen izan diren. Honezaz gainera, herri gehiago ditugu, esaterako Bizkai herria Amikuzen; bertan euskaraz mintzo diren jende bakanak harat ezkondu euskaldunak dira, herri honetan sortuek gaskoiez egin baitute azken hamarkadetan bederen. Lapurdiko Bardoze herria ere euskalduna da, baina gaskoi eta euskaldun nahasirik bizi izan dira bertan aspaldian. Zuberoan Montori-Berorize aski herri bearnesa dugu hizkuntzaz, erkidegoa etorkiz bearnesa izanik eta baita hein batez Maule ere. Alderantziz, Bearnora jo zuten zuberotar euskaldunek jendeztatu zuten Eskiula herria.

Elkarren ondoan bizi izanak eragin du hainbat euskaldun jendek bizian gaindi gaskoia ikasi izana, eskualde haietan mutil edo neskame egon zirelako edo azienda tratuan hango jendeekin usu ibili behar izan zutelako, edota merkatu hartu-emanagatik, esaterako Peirehoraden. Ohikoa da amikuztarrek gaskoia jakin izana, guk Oragarren ezagutu ditugu honelako gizon nagusiak eta ohikoa da zuberotarrek bearnesa mintzatzea ere. Petiri Prebende Salaberrikoa aurkeztu zigun Txomin Peillenek: euskara, bearnesa, gaztelania eta

5. Okzitaniera gehienean *-o* eman du latinetikako *-a* azentugabeak, baina Baionan *-e*; latinetikako bokalarteko *-n*-ren emaitza, aitzineko bokalaren araberakoa da; latin arrunteko *o* hertsi zaharrak frantsesez ez bezala *u* eman du; euskaraz bezala, sudurkari eta albokari ondoko herskari ahoskabeak ahostundu dira; adibide zaharretan bokalarteko kontsonante ahoskabeak ez dira ahostundu.

frantsesa zekizkien 1902an sortu eta 1985ean 83 zituen gizon santagraztar hark. Zuberoako euskaran bearnesak agerpen handia du: Etxahunen bertsoek erakusten digute, pastoralek edo zuberotarren mintzoko mailegu lexiko bearnesen kopuru haziak. Bearnesaren eragina ahoskeran eta lexikoan gertatu da bereziki, izenaren eta aditzaren morfologian aurrizki edo atzizki zenbait ahantzi gabe; ez dirudi atzo goizeko eragina, gainera.

Dena den, xx. mendearen bigarren erdian frantsesa bazter gehienetan nagusituz joan den ber, gaskoi edo bearnesaren indarra higatuz joan da: 1968. urtean adineko ziren hainbat euskaldun ipartarrek bazekiten gaskoi edo bearnesa, baina xx. mende bukaerako zahar euskaldunetan ez zen hau hain arrunta, apalduz zihoan, nahiz zenbait jendek oraino mintzo zuten. Okzitanieraren erabileraz eta etorkizun beltzaz dihardu Dansereauk (1992): dioenez, okzitanieraren mintzatzaile gaztea izateko, baldintza *sine qua non* da lagun hori gizona izatea, baserri giroko lanetan jardutea eta herrian bizitzen eta lan egiten gelditzeko asmoa izatea, erabaki hori irmoki harturik edukitzea, hori da egun okzitanieraz mintzo den gaztearen soslaia. Jean-Pierre Chambonen arabera (2004: 6, 8), okzitaniera moderno eta garaikidearen ezaugarri nagusia frantseste bilakabidea da: lexikoan, esaeretan, sintaxian nola fonologian. Hiriguneak dira eragile nagusiak: Miarritze-Baiona, Bordele, Periguers (Périgeux), Limòtges, Clarmont-Ferrend (Clermont-Ferrand), Tournon, Romans, Gap eskualdeko Ambrun (Embrun), Marsiho (Marseille), Montpelhièr (Montpellier), Tolosa. Hiriotan Bordele, Clarmont-Ferrand, Limòtges eta Ambrun dira frantseste gehien eragin dutenak, ondotik Marsiho doakie eta eragin apala jokatu dute Montpelhièr eta Tolosa hiriek. Baiona Montpelhièr-en heintsuan legoke.

Hegoaldeari dagokionez, ezaguna da arrazoi zenbaitengatik, beharbada Nafarroako erregeak hala agindurik, Erdi Aro apalean merkatari eta arrantzaleek osatu erkidego gaskoi garrantzizko bati Donostiako Urgull mendiaren peko alderdia esleitu zitzaiola eta Gipuzkoa ekialdeko itsasaldeko herrietara ere gaskoiak erruz etorri zirela. Donostia nagusiki gaskoiek jendeztatu zuten eta Nafarroako erregeen mesedea lorturik, berek agindu zuten bertan, lehen garaietan bederen jatorrizko gipuzkoarrekin hartu-eman handirik izan gabe, salerosgoari dagokion ohikoa salbu. Hala Donostia nola Hondarribia aski bereiz ibili dira historikoki gainerateko gipuzkoarrengandik; litekeena da azalpena bertako biztanleen jatorri gaskoian egotea. Esan ohi da errenteriarrek donostiarrak *landerrak eta kaskoyak* deitzen zituztela.

Denbora iragan arau, ordea, Donostian izan zuten nagusigoa galduz joan ziren gaskoiak eta ondoko euskaldunekin nahasiz joan ziren; uler daitekeenez, baita hizkuntzaren aldetik euskaldunduz ere. Dakigunez, gaskoi hizkuntza egin izan da Gipuzkoako ekialdeko itsasaldean: Donostian, Altzan, Pasaian, Lezon, Oiartzunen,

Irunen eta Hondarribian.[6] Juan Ignacio Gamon historialariak dioenez, XVIII. mendearen hasieran galdu zen Donostian gaskoi hizkuntza; badakigu XIX. mendearen lehen erdian Donostian ez zela gaskoi hiztunik gelditzen, baina Pasaia San Juan eta San Pedron eta Hondarribian baziren, nahiz herriotan orduan gaskoia gibelamendu gogorrean zihoan. Nicolas Soraluze historialariak 1870ean zioenez, zenbait donibandar orduan ere gaskoiez mintzatzen ziren. Hizkuntza horretan jardukitzen zuten hondarreko donibandarrak XX. mendearen bigarren hamarkadan hil ziren: Illarramendi izeneko serora bat eta Luis (1919) eta Eduvigis Trezet (1918) anai-arrebak. Jose Joaquin Otaegik Pasai Donibaneko aitona-amonen gogoan zirauten esaera gaskoiak bildu zituen 1922an, hizkuntzaren higadura ezagun dutenak.[7] Gipuzkoa ekialdeko itsasaldeko herriotako deitura eta toponimo ugari gaskoiak dira, baina euskal deituren jabe ziren eta euskaraz mintzo ziren XIX. mende bukaeran edo XX.aren hasieran gaskoiez hitz egiten zuten herriotako jende haiek.

## 4. EUSKAL PIZKUNDEAREN ERAGINA HIZKUNTZAREN BILAKABIDEAN

Idealista alemaniarrek erromantizismoaren hazia erein zuten Europan: herrien berezitasunen aldeko joerak eta oldarraldiak XIX. mendeko euskaldun anitzen nazio kontzientzia eta erreakzio euskaltzalea bizten lagundu zuen; pizkundea gizarte eta kultura fenomeno hedatua da. Ipar Euskal Herrian Abbadiak lehen aldiz 1851n eratu zituen *Lore Jokoak* mugimendu horrekin lotu behar dira: euskaltasuna harrotasunez erakusteko eta goraltzeko halako *in-group* beroaldia ziren jaiok, literaturaren sisteman eragin zutenak, ondotik sariketak eta argitalpenak etorri baitziren. Olerkigintza eta kantu bildumak hedatzeko joera sustatu zuten. Aitzineko garaietan euskal literaturan hizkuntzaren apologia eta erlijiozko gaiak nagusitu baziren ere, Lore Jokoen garaian literatura helburuko lanen ugalketa gertatu zen. Abbadiak ikusten zuen hizkuntza ezin salbatu dela berez eta bakarrik, bere *volksgeist* edo herri nortasunean aldaketa bortitzak jasateko arriskuan dagoen erkidego batek bere kultura osotasunean zaindu eta kudeatu behar duela ulertu zuen.

---

6. Donostia eta Hondarribia arteko itsasaldean nabarmen ageri da gaskoi hizkuntza toponimo eta deituretan: *Aiete, Argelot, Beloka, Codamasti, Enbeltran, Engomez, Fuente de Quer, Gorgol, Herrera, Mal-vernet, Merkelin, Mirall, Miramon(t), Molinao, Mont-pas, Montaot & Montaut, Morlans, Narrika, Panpinot, Pasajes, Polloe, Pontika, Port de la borda, Port de Lazon, Port de la plat, Primaol, Pumerake, Urgull…*

7. *Marquelines cantes cinco al ardit,* karrakela saltzaileena; *a maitines zirriguilles, a misa mayor sermón, a les escole a menjar gebolles,* Aste Sanduan haurrak sakristauaren gibeletik mezara deika kantuz. Serapio Mujikak Donibanen bilduak dira beste hauek ere (1923): *marchairu, porte le chandelu,* 'zoaz eta ekarrazu kandela'; *vespeia tauetz?*, 'nahi duzu hamarretakoa egin?'.

Espainian nazio kataluniarra eta galegoa kulturaren norabide berean zetozen: Kataluniako *Renaixença* Euskal Herriko Lore Jokoen ondotik 8 urtez eta Galiziako *Rexurdimento* 10 urte ondotik. Gurean 1879an iragan ziren Hegoaldera Lore Jokoak eta 1897 arte iraun zuten. Hauen egitekoa *Euskal Jaiek* hartu zuten, esaterako Donostiakoek, eta Euskal Herriko leku gehiagotan ospatu ziren, 1936 arte: euskarazko narrazioa eta antzerkia sustatu zituzten.

Ibon Sarasolak dioenez, Lore Jokoen garaiko olerkigintzak ez zuen autonomia eta heldutasunik lortu. Jon Juaristiren iritziz, antolatzaileek ezartzen zituzten gaien nolakoak sortzaileen jokalekua mugatzen eta murrizten zuen: Iparreko koplarien guduetan agerpen zabala izan zuten euskal gazteen emigrazioak eragin kalteek eta baita, bestalde, laborariaren bizimoduaren eta emaztekiaren tradizioko rolaren goraipamenek. Hegoaldean foruak galdu ondoko ohiko obsesioak ageri ziren: euskararen gibeleratzea edota herriaren izpiritua sinbolizatzen duen Gernikako Arbolari egiten zitzaion mehatxua. Iñaki Aldekoaren arabera, Lore Jokoek euskal bizimolde, erlijio eta ohituren ikuspegi gordetzailea ekarri zuten; formulazio moral honek euskal olerkigintza modernoaren sorrera gibeleratu zuen, honen ezaugarri nagusia norbanakoaren ikuspegia eta subjektibotasuna diren heinean.

Patri Urkizuk aldeko alderdien berri eman du: Katalunian eta Galizian bezala, Lore Jokoak hizkuntzaren hedadura eta antolaketa kulturala eragiteko lehen bultzagune espezifikoa izan ziren. Esaterako, *Zazpi euskal herriek bat egin dezagun*… kantu ezagunaren egile den Gratian Adema «Zaldubi»-ren edo *Ikhusten duzu goizean* ahairearen egile Jean-Baptiste Elizanbururen emaitza lirikoak Lore Jokoetan garatu ziren; Hegoaldean *Ama euskeriari azken agurrak!* ezaguna sortu zuen Arrese Beitiak.

Kantu eta olerki zaharren bilduma ere Euskal Pizkundearen ingurumarian agertu errealitatea da: Jose Manterolak *El Cancionero Vasco* bildu zuen (1877-1880), ordura artean han eta hemen argitaratu olerkiak dakartzana. Herri ipuin eta kantuak bildu zituen Jean François Cerquand-ek: *Légendes et récits populaires du Pays Basque* (1874-1883). Wentworth Webster-ek, aldiz, *Basque Legends* argitaratu zuen (1879), baina arlo honetan Azkueren lan erraldoia da aipagarriena. Tradiziozko euskal kultura, ohiturak, artea, aitzinaroko kultura materiala eta beste hainbat erakusgarri biltzen eta aztertzen jardun zuten garai hartan Telesforo Aranzadik, Azkuek, Joxe Miel Barandiaranek, aita Donostiak edo Manuel Lekuonak. Berebat, industriaroan edo hiri giroko garai berrietan barreneratzen zihoazen euskaldunentzat goi mailako hezkuntzaren eta kulturaren premia gorria zen: euskal hezkuntzak eskola eta unibertsitatea behar zituen eta horregatik, Eusko Ikaskuntza erakundeak alor hauetan jardun zuen.

Itxaron zitekeenez, ordea, oldar guztia ez zetorren Europako erromantizismoaren ibilbidetik edo Katalunia-Galizietarik, barreneko euskal indarrek ere garrantzi handia zuten:

- Ipar Euskal Herrian frantses erakundeek zentralismo nabarmena ezarririk zuten, eta euskaraz mintzo ziren bertako jendeak ohartzen ziren giro ofiziala frantsesaren aldeko eta euskararen aurkako bihurturik zegoela; halako euskaltasun kulturala sumatzen hasi zen garai hartan.
- Gerra karlisten giroan Hegoaldean foruak eraitsi ziren; Nafarroan 1839-41 bitarteko Lege Pakzionatuak erresumako aldundia zena probintziako aldundi bilakatu zuen, nafarren adostasun maila handirik gabe, Iruñeko Gorteak baitziren forua aldatzeko eskumena zutenak; 1862an Nafarroa Espainiako beste edozein probintzia bezalakoa zen, gorteak galdurik zituena; ondotik Nafarroako errejimen fiskalari 1893-95 aldian aizkorakada jo zitzaion eta *gamazada* izeneko herri-altxamendua eragin zuen, Manezaundik 1935ean hain suhar kontatu zuena. Gainerateko beste hiru herrialdeetan 1876an eraitsi ziren foruak: gertakariek utzi zuten galera sentipena, tradizioko osagai ugari eta euskara bera gibelerat galbidean zihoazela ohartzea, mugimendu euskaltzaleen bultzatzaile gertatu ziren gizartean. Norberaren herrialde edo probintziari ordura arte bezainbat ez begiratzeko eta Euskal Herria osorik aintzat hartzeko borondate politikoa agertu zen. Elite kultural batzuek, Iruñean, Donostian, Bilbon eta Gasteizen talde euskaltzaleak eratu zituzten. Ipar Euskal Herrian ere bazen halako elite bat, apez, sendagile eta gainerateko lanbide liberaletako gizonek osatua, Frantziako estatuaren nagusitasuna politikoki zalantzan jarri gabe euskaltzaletasun etnikoari indar eman nahian zebilena.
- Baina ordurako XIX. mendean Xaho zuberotarrak zazpi euskal herrien batasuna aldarrikaturik zuen, Zaldubik *Zazpi eskual herriek* kantu ezaguna haizaturik, Abbadiak 1892an Donibane-Lohizuneko jaietan *Zazpiak Bat* oihukaturik eta Aranak Hegoaldean *Euzkotarren aberria Euzkadi da* goiburua sorturik. Batzuk eta besteak ikur politiko-kultural berria eraikitzen ari ziren, nahiz euskaltasuna Iparrean kulturalagoa zen; halaz ere, ikuspegi kultural-etniko hura lan ildo edo joera politiko berri bat urratzen ari zen Euskal Herrian, Hegoaldean batez ere.[8]
- Oinarri kulturalari dagokionez, garai hartako literaturan eta letretan *Euskal Pizkundea* gauzatu zen, Lizardik bere olerkian irudikatu bezala.[9] Euskara

8. Abertzaletasun politikoak foruzaletasunetik eta karlismotik edan zuen Hegoaldean, ia esan liteke foruzaletasunaren hurranen urratsa abertzaletasuna bera izan zela. Bizkaian *Euzko Alderdi Jeltzalea* sortu zen (1895), baina Iruñeko lehentxeagoko *euskaroen* adigaiak —Campion eta besteren ideia euskaltzaleak— ez dira itzalpean atzendu behar.

9. Lizardiren ideia poetikoak Europako sinbolismoarekin edo Espainiako modernismoarekin uztartzen dira. Ideia poetikoak guztiz garbi zituen zarauztarrak, Lauaxeta, Orixe eta Zaitegiren literatura lanez egin zituen kritikek adierazten dutenez. Inguruko herrien kulturaren eraginpetik

sustatzeko garrantzi handia hartu zuen *Euskaltzaleak Bazkuna* izenekoak; izan ere, ordura arteko foruzaleek galtzear zegoen ikur gisa zekusaten euskara, ez etorkizuneko gizarte berriaren zutabetzat. Hala Ipar nola Hego Euskal Herrian, euskararen aldeko *Hizkuntza Plangintza* antzeko zerbait eraiki edo egituratzen hasi zen.

- Kulturaren hedaduran eskuhartu zuten emaztekiak aipagarri dira, hitzaldiak emanez eta egunkari eta astekarietan idatziz; ideologiak zedarritu alorrean lan egin zuen *Emakume Abertzale Batza*-k (1922-1936): erlijio kristaua, euskararen atxikimendua eta euskal amatasuna balio goretsiak ziren orduko beren idazkietan. Ipuinak, antzerkia edo saioa ondu zituztenen artean, Maddi Ariztia, Julene Azpeitia, Errose Bustintza, Karmele Errazti, Maria Etxabe, Julia Gabilondo edo Tene Mujika aipa ditzakegu. Rosario Artolak eta Sorne Unzueta «Utarsus»-ek olerkiak ondu zituzten; berebat, Frantziska Astibia «Onintze»-k hainbat olerki argitaratu zituen *Euzkerea* aldizkarian.

Euskaltzale guztiak bat zetozen euskara gizartean gibelerat zihoala, jendeak erdararatzen ari zirela, frantseserat eta gaztelaniarat lerratzen: arazoaren zinezko neurria hautematen ez baldin bazen, galerak etenik ez zuen izanen, zazpi herrialdeetako hizkuntza galduko zen. XIX. mendearen hasieran Humboldt-ek esana zen hau, eta erritmoan asmatu ez bazuen ere, norabidean guztiz asmatzen ari zen hizkuntzalari alemaniarra.

Baziren, euskararen galera onuragarri izan zitekeela irizten ziotenak ere: Baionako Julien Vinson frantsesa edo Miguel de Unamuno bilbotarra, 1901ean bere hiriko Arriaga antzokian euskararen heriotzaren onuraren prospekzioa egin zuena. Bilbo aldean sozialismoak indarra zuen: Felipe Carretero eta Tomas Meabe leaderrek euskal abertzaleen aurkako joera isurtzen zuten. Esate batera, *La Lucha de Clases* aldizkaritik Lore Jokoen aurkako ideologia hedatu zen, eskualde bateko ohiturak beste batekoen aurka bultzatzen zituztelakoan, gobernuari Lore Jokoak eta gaztelania ez ziren hizkuntza guztiak galerazteko eskatzerainokoan (1899/X/7). Euskararen aurka jotzen zen sozialismotik: abertzaleek maketoen —euskaraz mintzo ez ziren kanpotarrak— aurka bereizkeria egiteko baliatzen zutela zeritzoten eta euskara baino, mundu modernorako

atera beharra zeukan euskaldunak. Euskal kulturak euskal gogo eta arimaren sustraietara jo beharra zeukan, eta horretarako ez zegoen euskara barrenetik eta sakon aztertzea bezalakorik. Euskal izaera bereziaren adierazpide bizia da Lizardirentzat euskara eta bereziki idazleak dira hizkuntza horren altxorra berreskuratu eta beraren adierazteko gaitasuna hedatu eta aberastu behar dutenak, euskal mundu ikuskera harrapatu behar dutenak. Lizardik arte nazionala eraikitzen lagundu nahi zuen, nortasun horri ongi egokituko zitzaion kanon estetikoa asmatu gogo zuen (Lourdes Otaegi 2004).

kultura espainiarra eta gaztelania aitzinatuago eta egokiago zekuskiten; euskara giro pribaturako zela uste zuten; ziotenez, apezek indarra eta aginpidea zuten guneetan baliatzen eta zaintzen omen zen euskara, ezjakintasunak iraun zezan. Haien ustean, beren pribilejioei eusteko burges zenbaitek hizkuntza gatazkak balia zitzaketenez, gaztelania ez ziren hizkuntza txikiagoen defentsa ez zen langile txiroen eginkizuna (Rivera 2008: 272).

Jakina denez, baziren jende euskaldun sozialistak; Eibarren Aquilino Amuategi, Marcelino Baskaran, Martin Erkiaga, Jose Gisasola, Jose Telleria… mitinak euskaraz ematen zituztenak, baina euskara xehea baliatuz, *Eibar'ko berbeta internazionala,* sabindarren berrikuntzetarik urrun; Bermeo batean Casimiro Marugan sozialista zegoen, bere ideiengatik herritarrek begi onez ikusten ez zutena. Oro har, langileen erakunde espainiarretan gauzatu zen mende hasiera hartako euskal sozialisten antolaketa, beren ekintzen unibertsoa eta beren gogoa Espainian kokatzen zen: Espainiako erakundeei obeditzen zieten, aldarrikapenak eta lanuzteak espainiarrekin batera egiten zituzten eta langile espainiarrenganako elkartasuna bizi zuten, Espainiako langileen inguruko gertakarien gaineko berri zuten, Espainia zuten beren herrialdea (275). Toribio Etxebarria eibartarrak garai hartan zioenez, euskaldunok ez dugu beste kulturarik hispaniarra baizik eta euskal kultura inoiz gauza baledi, espainiarraren ume espirituala beharko luke izan; ez zuen uste euskarak mundu modernoko konplexutasunei eta adigai intelektual ugariei erantzun ziezaiekeenik.

Euskal sozialistek eredu federalista «pimargaliarra» aipatzen bazuten ere, ez zuten lurralde autonomiaren ideia garbi ikusten; hispaniar kulturaz ari ziren 1918ko beren hezkuntza ideietan eta haien ustean ahala eduki behar zuena Espainiako estatu federala zen, ez euskalduna, beldur baitziren etorkizunean karlistek eta abertzaleek Euskal Herrian gobernua era zezaten. Biziki zaindu nahi zituzten bi oinarrizko eskubidek Espainiako estatuaren esku gelditu behar zuten: hiritartasuna izateko norberaren bermea eta hezkuntzaren garapena (284).

Nolanahi ere den, Euskal Herrian bazen halako elite bat, euskararen galeraz biziki kezkaturik, lehen baino lehen zerbait egin behar zela guztiz oharturik bizi zena. Arazoari irtenbide kultural bat ematea izan zitekeen konponbidearen ataletarik bat: jendea ohar zedila, euskara hizkuntza hain maitea eta munduan bakarra izateaz landa, erabili beharrekoa zela, haren corpusean lan pixka bat eta ukitu guti batzuk eginez gero, kultura-hizkuntza eta ondorioz komunikazio-hizkuntza nagusi ere bilaka zitekeela. XIX. mendean euskaltasun etniko-kulturalaren alde Hegoaldeko lau hiriburuetan euskaraz idatzitako aldizkariak edo argitalpen euskaltzale elebidunak argitaratzen ziren. Juan Iturralde y Suitek, Campionek eta bestek *Asociación Euskara de Navarra* eratu zuten Iruñean, *Revista Euskara* argitaratu zuena (1878-1883). Fermin Herran-ek Gasteizen eta ondotik Madrilen *Revista de las Provincias Euskaras* (1878-1881). Donostian *Euskal-*

*Erria* argitaratu zuen Manterolak (1880-1918). Fidel Sagarminaga buru zelarik, Bilbon 1879an *Euskalerria* elkarte foruzalea dugu, *La Unión Vasco-Navarra* egunkariaren sortzaile. Azkuek Bilbon *Euskalzale* (1897-1899) eta *Ibaizabal* (1902-1903) euskara hutsezko aldizkariak argitaratu zituen. Azkuek buru-belarri ziharduen Bilbon euskararen modernizazio eta normalizazio lanetan, baina Unamunok ez zuen Bilbo euskalduntzea zilegi ikusten.

Berebat, Ipar Euskal Herrian nekazari jendearen etxe ugaritara aste oroz *Eskualduna* iristen zen, xuriek herri euskara dotorean ematen zutena. Jon Casenave ikertzaileak dioenez (2005), aldizkari honetan trebatu zen gizaldi gaztea: Jean Barbier, Jean Etxepare Bidegorri, Pierre Lhande, Jean Saint-Pierre «Anxuberro», Jules Moulier «Oxobi», Jean Elizalde «Zerbitzari». Apez eskuindar eta frantziazaleek kudeatzen zuten, astekariko Pochelou idazkariak «Zazpiak bat» goiburua zentsuratzen zuen, arriskua ikusten zion; iritzi abertzaleagoa zuten orduko Broussainek eta Constantinek (Zalbide 2007: 952). Iparrean ohartzen ziren Hegoaldeko euskaldunen kharraz: *mendiz harateko anaiak, hedaduraz eta bihotzez botheretsu dire. Gauza zuzenbidezko bat, nahi izateaz geroz ardiesteko moldez galde dezakete* zioen Landerretxek (1910: 64). Ameriketako ipartarrek ere euskal aldizkariak eratu zituzten: Martin Biskailuzek Los Angelesen *Escualdun Gazeta* (1885), hiru ale baizik atera ez zuena eta Jean-Pierre Goitino ainhoarrak *California-ko Eskual Herria* (1893), sei urte iraun zuena.

Kultura eta idazki bidezko XIX. mendeko irtenbide hauek ez zuten haustura politikoaren erronka antzik: halako ikuspegi etniko eta tradiziozalea zerien, iragan loriatsuan euskaldunak beren artean bakean eta euskaraz bizi izan zirelako uste inplizitua zekarrena. Hegoaldean foruzale liberal hiritarrek nahiz integristek bultzatu zuten: ikuspegi liberaleko jende euskaltzalea bazen ausarki, Donostia batean, esaterako. Iparraldean, berriz, apezak ziren euskaltasun etniko horren lemazainak eta beren idazkiei ideologia arras integrista zerien. Nolanahi ere den, orokortasun didaktiko hauen bidez ez dugu adierazi nahi Iparraldean errepublikaren aldeko ideiak zituen euskaldun euskaltzalerik ez zenik (J.-B. Elizanburu olerkaria, esate batera), edo sendagile euskaltzalerik ez zegoenik, edota Hegoaldean euskaltasunak apezen bermerik ez zuenik.

Alta, Hegoaldeko hirietan kulturaren aldeko euskal aldizkari batzuk aterarik, eta Iparraldean nekazarien gizarteko harat-honatak jarraitzen zituen astekari xuri bat argitaraturik, euskararen etorkizuna ez zen aise trenkatuko. Euskal eliteko handiki batzuek sumatzen zutenez, estatuaren arrazoia eta indarra iraultzeko, auziaren sakonean borondate esplizitu eta teorizatua harilkatu beharra zuten euskaldunek: pentsakera hori batik bat Hegoaldean zebilen.

Euskararen gibelamenduari norabide duinagoa eman ahal izateko, halako estatus plangintza bat zeukan begiz joa Arana politikari bizkaitarrak, nahiz Abantoko ideologoak

hainbat idazki ondu zituen arraza euskararen gainetik ezartzekoa dela ziotenak. Aranaren aburuz, euskarak hizkuntza beharrezkoa behar zuen izan bere herrian, bestela ez zegoen zereginik. Estanislao Aranzadi iruinsemeak, berriz, euskal eskualde nekazari-abeltzainetan bertako hizkuntzak iraun zezan, argi zekusan gauza beharra zela hirietako handikiek, sosdunek, gizartean goi mailako irizpena irabazirik zeukaten jendeek, euskarari bizkar ematen ez jarraitzea, bestela, mimesi hutsez herri ttikietako jende euskaldun xumeak ere berehala hasiko baitziren eskolan ikasi erdara handiak baliatzen; euskaldun zirauten herrien geografian gaindi hizkuntza handi-berriak hedatuko ziren: *danbor berriak sonu on,* esan ohi denez.

Oro har, hizkuntzaren galerari norabide aldaketa eragingarria ezartzeko, funtzio berriak eskuratu behar zituen euskarak: aurrez aurreko ahozko ohiko jardunari ez zitzaion aski irizten; euskarak eguneroko zinezko tresna behar zuen izan irakaskuntzan eta administrazioan, lanbide berrietan edo arlo politikoan… Esparru horiek guztiak erdarari utziz gero, lanbide berri horietara joko zuten euskaldunek ezinbestean erdara baliatuko zuten: lanbide berriotan eta eguneroko bizi arrunteko beste hainbat arlotan euskarak behar zituen funtzio berriak irabazten ez bazituen, ordura arteko gizartean eta bizimoduan bermaturik zeuzkan ohiko funtzio arrunt edo xeheagoak ere galduko zituen. Perspektiba makurra zen euskararena, hil ala bizikoa.

xx. mendearen hasieran euskal erakunde ofizial batzuk eraiki ziren: *Eusko Ikaskuntza* eta *Euskaltzaindia* (1918), biek garrantzi handia ukan zuten euskararen sustapenean. Nazioarteko ikerketa aldizkari sendo bat ere sortu zen: Urkixok *Revista Internacional de los Estudios Vascos* bultzatu zuen (1907-1936). Bilbo eta Donostia hirietan ere euskararen aldeko normalizazio hotsak sentitu ziren. Gasteizen Eusko Ikaskuntzaren itzalean *Baraibar taldea* sortu zen 1928an, herrialde osoan euskara zabaltzea helburu zuena, bereziki haur eta gazteen artean, jolas eta kantuen bidez oroz gain; taldeak Gasteizen, Laudion eta beste herri batzuetan lan egin zuen. Ikastolak ere hasi ziren agertzen: Miguel Muñoak 1914an Donostiako Parte Zaharrean *Koru´ko Andre Maria'ren Ikastetxea* eratu zuen; ondotik, Tolosa, Errenteria, Soraluze, Bergara, Iruñea, Lizarra, Gasteiz, Elizondo, Oñati, Segura, Irura edo Andoaingoa etorri ziren eta 1932an Bilbon *Eusko Ikastola Batza* eratu zen. Badirudi xix. mende bukaeran eta xx. mende hasieran Azkuek Bilbon eratu zituen eskola eginahaletan haurrei euskara irakasten zitzaiela, baina ez zen euskarazko hezkuntza.

Nolanahi ere den, Hegoaldeko 1936ko gerra zibilak emaitza lazgarriak ekarri zituen eta desmoralizazio handia eragin zuen: euskara zorrotz eta irmoki galerazi zen bertako gizarteko biziaren atal gehienetan, *Euskal Pizkundea* izenekoa geldiarazi. Euskal kulturako kide batzuk hil zituzten, funtsean ideia abertzaleak erakutsi zituztenak, eta hainbatek atzerrira ihesi jo zuten, batik bat Hego Ameriketara.

xx. mendeko Frantziako bi gerrek ere eragina izan zuten euskal gizartean, gudu haietan partaide izan ziren ipartarrek Frantzia handiarekiko identifikazio politiko eta sinbolikoa inoiz baino gehiago barreneratu baitzuten, eta Frantzia handiaren praktika politiko-administratibo zentralistak euskararen aurka eta frantsesaren alde jo zuen beti: ordura arteko euskaltasun kulturalarentzat kolpe latzak izan ziren 14ko eta 39ko gerlak. Bi estatu handietan euskararen aurkako politikak areagotu ziren: Hegoaldean zigorrak legeak esplizitaturik eta formulaturik zeuden, biloa moztu zitzaion euskaraz mintzatzen entzun zitzaion hainbat eta hainbat emaztekiri. Iparraldean ezintasuna inplizitua zen eta mozorrotuago zetorren, baina hala Espainiako nola Frantziako legeriak zehaztasun handiz euskararen aurka ziharduten; bakoitzak bere estiloa zeukan, baina eragina berbera zen: erdararatzea, deseuskalduntzea, espainiartzea, frantsestea.

Hegoaldeko katakunba giroaren eta II. Mundu Gerraren ondotik, 1956ko Parisko I. Euskal Mundu Biltzarrak argia eta arnasaldia ekarri zituen euskaltasunarentzat; dinamika euskaltzale kulturala eta politikoa berriz abiatu ziren, halako *Bigarren Euskal Pizkunde* bat gertatu zen, hala Hego nola Ipar Euskal Herrian:

- Hezkuntza euskaraz eskaintzen zuten ikastolak berrantolatu ziren; Miguel Muñoaren ikasle zen Elbira Zipitriak Donostian klandestinitatean ekin zion arloari 1943an eta 50eko hamarkadan andereño gehiago izan ziren Donostian; Bilbon 1957an, Iruñean 1963an, Gasteizen 1966an eta Lapurdin 1969an ireki ziren
- *Euskal Kanta Berria* izendatu zenak ere kulturazko bultzada handia eman zion euskarari: *Ez dok amairu* taldea nabarmendu behar da
- 60ko hamarkadan *Euskara Batuaren* bidea urratu zuen Baionako Euskal Idazkaritzak eta 1968ko iraileko Arantzazuko Bilkuran estandarizazioa finkatzen hasi ziren euskaltzainak. Oñatin urrian ofizialki aurkeztu behar zen, baina garai hartako arrazoi politikoak bitarteko, Franco generalak Hegoaldean *Estado de excepción* ezarri baitzuen, onespen ekitaldi ofizial eta publikorik gabe abiatu zen euskara batua
- Euskal Herriaren beregaintasun politiko-administratiboa bilatzen duen *Euskadi Ta Askatasuna* edo ETA erakunde armatua 1959an eratu zen Hegoaldean eta 70eko hamarkada aitzintxoan ekin zion Espainiako estatuaren estamentu zenbaiten aurkako odol-ekintzak eta heriotzak gogor egiteari

## 5. HIZKUNTZA IDEIAK ETA GRAMATIKOGRAFIA

### 5.1. Hizkuntza ideiak[10]

Metahizkuntzak garrantzi handia izan zuen XIX. mendearen bukaeran. Euskal Herriaren egoerari loturik sentitzen zen euskara gizartean, areago Nafarroan 1839-41ean eta Araba, Bizkaia eta Gipuzkoan 1876an foruak eraldaturik edo galdurik izanik. Hizkuntzaren nolakoari buruz gizartean ez zegoen ikuspegi batasunik eta orduko idazleek eztabaida franko eduki zuten nolako euskaran idatzi behar den erabakitzeko. Oro har, euskararen izaerak zatiketa eragiten zuen hizkuntzalarien iritzietan, eta denbora behar izan zen euskararen izaera den bezalakoa dela onetsi eta zinezko euskara ez artifiziala aztertzen hasteko. Urkixoren, gaztaro ondoko Azkueren, Gavelen, Lafonen edo Mitxelenaren jarrera zientifikoak euskara den bezala onesteko joera indartu zuen; bestalde, idazle zaharren merezimendua onetsirik, haien hainbat lan berrargitaratzen hasi ziren euskalariak: Axularrenak, Beñat Etxepareренak, Oihenartenak, Tartasenak… Ordea, euskal idazle klasikoen aldeko iritzi hori ez zen berehalakoan nagusitu. Euskal klasikoak zokoratu nahi izan ez zituzten hizkuntzalari eta filologo haien ustearen aitzinetik bestelako iritziak agertu ziren gizartera XIX. mendearen bukaeran eta XX.aren hasieran, euskararen *sendatzaileenak*.

Erdaren indarraldia Euskal Herrian gogor hedatuz zihoan eta erdal eragina gero eta nabarmenagoa zen euskal corpusean: hitzetan, hainbat eta hainbat itzulitan eta perpausen joskeran. Ondorioz, euskara bere herrialdeko gizartean garbirik gordetzeko eta babesteko xedez, euskaltzaleek esku-hartzearen premia gorria sumatu zuten, zerbait egin beharra, euskara aldatu edo hobetu beharra, batez ere garbitu beharra. Euskaltzale eta idazle batzuen ustez, garbitasun hori lortzeko bide bakarra iraganari begiratzea zen; ikuspegia ez zen berria, Pablo Pedro Astarloaren ideietan oinarritu ziren jarrera honen aldezleak.

Garai hartako jardunaz printzok nabarmendu ditzakegu:

a. hitz elkarketa eta eratorpena baliatzean arlo fonikoan laburtzapen gogorrak egin zituen Aranak hitz berriak eratzeko
b. izenaren eta aditzaren morfologian aldaketak eta berrikuntzak proposatu zituzten Azkuek, Aranak, Manuel Arriandiagak edo Saturnino Soloetak (fraide izenean Soloeta-Dima)
c. euskararen hitz-hurrenkeran Seber Altubek arauak eman zituen idazteko, egun ere indarrean dirautenak
d. alderdi lexikoan Aranaren garbizaletasun joerak indar handia hartu zuen haren jarraitzaileen artean, baina ondoko euskal idazle guztiak, Euskal Herri guztia, oro

10. Laka (1986, 1987) eta Pagola (2005) baliatu ditugu gehienik 5.1.1 eta 5.1.2 azpiatalak idazteko.

har euskara eta urte batzuen ikuspegia aintzat harturik, ezin esan da berriztatze hark euskaran eragin handia eduki duenik. Lehen mailako idazle ez bizkaitarrek ez zituzten hitz berri haiek erruz erabili. Dena den, ñabardurak behar dira. Euskal Herri guztiko idazleek Aranaren hitz berriak oro har erabili ez izanak ez du esan nahi garbizaletasunak XX. mendearen lehen erdian eraginik izan ez zuenik.

Hurranen lerroetan XIX. mendearen bukaerako euskararen inguruko hiru joera aurkezten ditugu:

a. euskararen guztizko erregulartasuna bilatzea
b. euskararen guztizko garbitasuna bilatzea

lehen bi joerok lan ereduetan halako lotura bat eduki zuten eta garbitasunaren auzia luzaz hedatu zen XX. mendean gaindi;

c. euskararen berezko izaera gaitzestea

### *5.1.1. Erregulartasunaren bilakuntza*

Euskararen sendatzaileen artean Azkue gaztea dugu, 1891ko haren *Euskal-Izkindea* gramatikan batez ere. Bizkaiko Aldundiko euskara katedra Aranari eta Unamunori irabazi zien Azkue gazte hark 27 urterekin argitaratu zuen euskaraz eta erdaraz idatzitako gramatika hau. Bertan euskara garbitzea da helburua, erregulartasunaren zaletasunez iraganeko aldaeren alde jotzea: bizkaiera garbiaren mugarritzat jo du Itziar Lakak Azkueren lehen gramatika hau (1986). Bizkaiera guztia arautzeko saioa da, Bizkaiko hizkuntza-eredu izateko asmoz idatzia: bizkaiera egokiago bat eraiki nahi izan zuen Azkue gazteak. Hizkuntza berritxuratzeko Aranak berak baino ausartago jokatu zuen garai hartan lekeitiarrak. Gramatika honetan Astarloaren, Juan Mateo Zabalaren eta Campionen eragina ageri da.

Astarloa durangarrak (1752-1806) eragin sakona utzi zuen Azkue eta Aranaren ideietan; hizkuntzaren filosofiaz diharduten haren idazkiak biek ezagutu eta baliatu zituzten (ik. 7. kap., §6.1.2). Izan ere, *Discursos filosóficos sobre la lengua primitiva ó gramática y análisis razonada de la euskara ó bascuenze* 1800. urte inguruan idatzi zuen, baina 1883.ean argitaratu zen. Durangarra euskara antzinako hizkuntza izan zela frogatzen saiatu zen, gramatika perfektua zuena: eufoniaren hatsarreak hotsen arteko elkarketa eta konbinazioak baldintzatzen ditu; ekonomiaren hatsarrearen arabera, berriz, naturak eskatzen duen guztia adierazteko ahalik eta baliabide formal gutien erabili behar du hizkuntzak; egokitasunaren hatsarrearen arabera, hots edo silaba bati halako adiera semantikoa dagokiola defendatu zuen.

Azkuek eta Aranak euskara perfektua eta logikoa delako ideia hartu zuten Astarloarengandik; beren jardunean nabarmen ageri da gaitasun honek euskara gainerateko hizkuntzetarik bereizten duelako ikuspegia. Beraz, euskara hizkuntza antzinakoa, perfektua eta garbia izanik, haren gramatikak ere garbitasun hori ukan behar du, ari izanaren arituaz hiztunek eragin dizkioten akatsez garbitu behar da. Arau eta hatsarreen aurka doazen euskararen ezaugarriak aldatu eta hobetu behar dira, berrikuntza edo aldaketak baztertu eta erak lehengoratu behar dira; batez ere eragin kanpotar berria ordezkatu behar da eta erdararen lizuna kendu. Ikuspegi politikotik, Aranak ekimen bikoitza darabil: herriari beregaintasuna «itzuli» eta hizkuntza bere sortzezko garbitasunera eraman (Pagola 2005: xvii). Baina Azkuek eta Aranak ez zuten sendagai bera euskararentzat: Aranak gizarteari eta politikari so egiten zion; aldiz, gaztaro ondoko Azkuek kulturari eta tradizioko jende euskaldunei.

Ekonomiaren hatsarreak eta logikak formaren eta funtzioaren arteko erlazio biunibokoa eragiten baldin badu eta pentsatzen baldin bada hizkuntza-zeinua ez dela arbitrarioa, homonimia eta sinonimia hizkuntzaren gaitz edo endekatzetzat ulertzen dira eta ondorioz, sendagaia behar dute, ez dira hizkuntza batentzat egoerarik hoberena. Orduko euskalgintzan giza esku-hartzearen premia sentitu zen: esate batera, *barri* eta *lagun* hitz polisemikoak baitira, *izparr* sortu zuen Aranak 'albistea' adierazteko eta *notin* «nor + -din» asmatu 'pertsona'-ren ordain. Koldo Eleizaldek, berriz, zehaztasun semantikoa bilatu nahirik, irizten zion *nai* utz daitekeela 'nahi izan'-erako eta *gura* 'desira'-rako.

Arazo lexikook «sendabidean» jartzeko etimologia da lanabes egokiena; Aranaren ortografia etimologikoak arrazoiari erantzuten zion gehiago erabilerari baino: *a(d)izkide* 'adiskidea', *atzaldu* 'azaldu', *bezkaldu* 'bazkaldu', *gaste* 'gaztea', *gusti* 'guztia', *goxarin* 'gosari arina', *saspi* 'zazpi, eskua osorik eta bi eri', *ziñetsi* 'sinetsi'. Azkue gaztearen jardunean ere bazen honelako saiorik: *azkatu* 'askatu', Astarloak *atz*-etik dakarrena eta Azkue gazteak eta Aranak honela idatzi zutena. Arana da zaintze adierarako «jagon» beharrean *jabon* lehen aldiz idatzi eta berarekin trinkoak eratu zituena: *dabo* 'zaintzen du', *daboz* 'zaintzen ditu'; «egon»-en trinkoekin «jagon» nahastea saihesteko indartu zuen *jabon*. Hitzen arteko nahasketak saihesteko balio zuten heinean mugatzen zituen berezko garapen fonetikoak Aranak.

Haren jardunean, arrazoiaren edo logikaren indarrez, hitz batzuek beste batzuk ordezkatu zituzten: *begiratu* → *begiztu* / *aberastu* → *aberatsittu* / *alde* → *aldez* / *argitu* → *argiztu* / *bi(g)urtu* → *birgurrtu* / *odoldu* → *odoldau;* bestalde, Aranaren luman *ondasun* hitza 'onaren izaera' izatera iragan zen eta *adi-erazo,* berriz, 'frogatu' izatera; laburragoa delako, nahiago zuen Aranak *geldu* *gelditu* baino, *lotsage* *lotsabage* baino. Aranaren arabera, zuzentasunaren izenean, *abetaldu*-k *abegija emon* ordezkatu zuen, *Jaungo*-k *Jaungoiko* eta *sengi*-k *seme-alabak*.

Hiztunengandik urrun eta denbora errealaz haraindi dagoen mintzoa deskribatu, aztertu eta bultzatu zuen Azkueren 1891ko gramatikak; denbora-historiak bidean zarpaildu duen hizkuntza bere arorik goren eta garbienera nahi zuen eraman, hizkuntzaren bilakabidearen arrastoak garbitu, iraganera eraman, hizkuntza osatu, aldaketarik jasan gabeko hizkuntza jatorrera jo: esaterako, *zu* izenordaina pluralerako uztea, iraganean zen legez, eta *zuek* berria baztertzea. Arriandiagak ez zuen *zuek* izenordaina maite, erdal klasismoaren eraginez euskarara sarturikotzat zeukan. 1893ko Azkueren *Bein da betiko* elaberrian baizik ez dira ageri idatzizkoan «izan» aditzaren Nor paradigmari dagozkion *gaiz* 'gara', *zaiz* 'zara', *daiz* 'dira', *gintzazan* 'ginen', *zintzazan* 'zinen' aldaera berriak, Azkuek baizik ez zituen erabili. Mende bukaera hartako Azkuek —lehen Azkuek, Azkue gazteak—, morfologia eta joskera gaietan ziharduen; haren garbizaletasuna, hizkuntza iraganeko egoera logikoago batera eramatean zetzan, analogietan oinarritu jokabidea proposatzen zuen euskal aldaeretarako; honela, *naiz* beharrean *nai* proposatzen zuen, beharbada *-z* horretan pluraleko morfema zekusalako; *gaiz,* berriz, pluralago eta logikoago zekusan *gara* baino eta hirugarren pertsonarako *dai* 'da' baliatu zuen, lehen eta bigarren pertsona singularrek duten *ai* diptongoaren analogiaz; *dut* edo *duzu* beharrean, *daut* eta *dauzu* etimologikoki osoagoak bultzatu zituen.

Azkueren 1891ko gramatikaren oinarrian, euskara lehen hizkuntza naturala delako ideia dago; aditzean agertuko litzateke hau ongien, erregularra eta analogikoa den aditzean, naturaren legeei egokitzen zaien euskal aditzean; honek naturarekiko duen egokitasun bikaina erakustea eta azaltzea zen Azkueren xedea (Laka 1986: 726). Azkuek gazte denborako bekatutzat jo zituen gero aditz asmatu hauek, irakaskuntzan aritzeak gaztaroko garbizaletasun porrokatua baretzea eragin zion lekeitiarrari, baina haren euskara irakurri duenak dakienez, hizkuntza txukun eta garbi erabiltzeko joerak aldi orotako Azkueren gogoan iraun zuen. Dena den, Azkueren berrikuntzak Aranak eta haren jarraitzaileek onetsi zituzten heinean baizik ez ziren nagusitu. Bizkaiko Aldundiaren katedran erakusten zen Azkueren eredu garbi honetaz honela zioen Arrola izeneko kargudun bizkaitar batek (1899/V/20): *yo concurrí un año a esos exámenes y no entendí una palabra del vascuence que en esa cátedra se enseña; y por ello propondría que se suprimiera esa enseñanza ó se diera en otra forma*.

Orduko euskal idazle bizkaitar sendatzaileek, hizkuntzaren baitako erregulartasuna eta jokabide analogikoak zahartasun frogatzat hartu zituzten. Azkueren *Euskal-Izkindea* gramatikak urratu ildoa Bizkaiko idazleen artean zabalduz joan zen, eta «hiperbizkaiera» izendatu eredura jo zuten bizkaitarrek (ik. atal honetan berean § 10.3), baina mendebaleko aldaerez haratago, «hipereuskara» bat sortzeko bidea ere urratu zuten idazle batzuek, Arriandiagak eta Soloeta-Dimak, esaterako.

Soloeta-Dima fraide eta idazle bizkaitarra garai hartako sendagintza-garbizaletasunaren adibide nabarmena dugu; erregulartasunaren, analogiaren eta logikaren araberako izenordainok proposatu zituen idatzizko euskaran baliatzeko (1922): *deu* 'ni', *keu* 'hi gizona', *neu* 'hi emaztekia', *leu* 'hura', *geu* 'gu', *zeu* 'zuek', *tzeu* 'haiek'. Izatez, lehen izenordaina, bigarrena, laugarrena eta zazpigarrena ez dagozkio hizkuntza errealari, ez dira euskara; hirugarrena, *neu*, lehen pertsonari dagokio zinez, ez bigarrenari eta sekulako arazoa eragin lezake hiztun arrunt-errealen ulermenean; seigarrena, *zeu*, pluralerako baliatzea nahi zuen, baina XX. mendean izenordain hori singularra zen; orduko euskaran zinez baliatzen zen izenordain bakarra proposatu zuen Soloeta-Dimak, bosgarrena: *geu*. Era honetako ideia eta aldaeretan oinarritzen zen sendatzaile haien gogoko euskara, baina era hauek ez ziren orduko euskaldunenak, kasik esan liteke beste planeta bati dagozkiola.

Beste sendatzaile batek, Aranak, arlo fonikoari garrantzi handia eman zion, hala euskal fonetikaren legeei nola eufoniei: haiei begira berriztatu eta antolatu nahi zuen ortografia, horregatik argitaratu zuen ortografiako eskuliburu bat (1896). Bertan Azkueren 1891ko gramatikako atal zenbait kritikatu zituen. Abandotarrak ez zion Azkueri nolanahi barkatu 1888an Bizkaiko euskara katedra lortzeko lehian lehen lekua irabazi izana. Hizkuntza arautzeko boterea izan zen urte haietan Arana eta Azkueren arteko lehiaren iturri nagusia, eta honela gertatu zen euskal ortografia arautzeko Hendaian (1901) eta Hondarribian (1902) egin ziren bilkuretan ere.

Ikus ditzagun Aranak proposatzen zituen aldaketetarik zenbait: esaterako, 1888an Unamunoren aurka jardun zuen *q* eta *k* hizkien arteko istiluez. Bestalde, tradizioko *asko* beharrean, Aranak *azko* berrikuntza idazten zuen (1895). Beste berrikuntza batzuk ere ezarri nahi izan zituen Aranak, baina ez zuten arrakastarik izan; esate batera, bizkaierarentzat ergatibo pluralaa *-ek* izatea nahi zuen eta hirugarren pertsonako izenordaina *beu* analogiko berria izan zedin. Berebat, bigarren pertsona singularreko *zu* izenordainaren agintezko aditz laguntzaileko *-z* plural morfema kendu zuen: *etorri zadi* 'etor zaitez' bultzatu zuen, baina arrakastarik gabe. Aditz laguntzaileetan ere bere uztako joera berexiak zekartzan: *euzan* 'zituen' eraren alde ekin zion *ebazan* baliatu beharrean; loturazko bokalen aurka ere ekin zion: *dauna* 'duena' & *daula* 'duela' idazten zuen *dauana* & *dauala* baliatu beharrean. Aranak ez zituen euskal hoskintzaren legeak sistematikoki aplikatu, inoiz era arbitrarioan jokatu zuen; haren ustean, gainera, euskal lege fonetikoen zenbait eskualdetako ugalpenak lotura naturala izan zezakeen eskualde haiexetako euskal gizakien gorpuzkera sendoarekin (Laka 1987: 16).

Sarasolak adierazi duenez, aditzari edo izen morfologiari buruzko orduko proposamen gehienak, proposatzaileek berek erabili zituzten, inor gehiagok ez (in Pagola 1995: ix). Erakuts dezagun sorta bat:

- Azkueren gramatikan *behar izango, gura izango* eta honelako erak zabaldu ziren, baina hauek ez zetozen bat Sabino Aranak bultzatu aldaerekin
- Azkueren gramatikatik abiatu ziren *urten* eta *igo(n)*-en aldaera iragangaitzak, Bizkaian eta Gipuzkoako mendebaleko alderdietan erabilera iragankorra badute ere
- Arriandiagak gutitasuneko konparatiboak baliatu zituen: *ederrezago* 'gutiago ederra', *zurijezena* 'gutiena zuria'
- Aranak bezala, etorkizuna adierazteko «izan» aditzei *-ke* erantsi zien Arriandiagak; Koldo Eleizalderen eraginez ere hedatu zen joera hau
- Beharbada Azkuek iradokirik, Arriandiagak hipereuskara sortu nahi izan zuen eta horretarako, Bizkaiko, Gipuzkoako, Lapurdiko eta Zuberoako aditza garbitzen saiatu zen. Bizkaiko Nor Nori Nork sailaren erroko *ts* atala euskalki guztietara eraman nahi izan zuen
- Alokutiboa pluralera hedatu zuen Arriandiagak, eta baita subjunktibora eta agintezkora ere; Astarloak, J. M. Zabalak, Lardizabalek, Bonapartek eta Aranak ere alokutiboa pluralera eraman zuten. Aranak *ijek* plurala sortu zuen: *i nayatorrk, nayatorrna / ijek nayatorrke, nayatorrne;* honetan Eleizalde eta Soloeta-Dima jarraitzaile izan ziren
- Arana da lehen idazlea bokalez edo *j*-z hasten diren eta aditz trinkorik ez duten forma batzuei jokabide trinkoa ematen diena: *belkigu* 'hel bekigu', *dazketsegun* 'barkatzen diegun', *azketsi* errotik. Arriandiagak eta Soloeta-Dimak kontsonantez hasi aditzak ere aldaera trinkoetan jokatu zituzten. Erraimun Olabidek ere anitz baliatu zituen era trinkoak; Mitxelenak zioenez, ondoko erdarek trinko ugari izateak ere eragin duke hedadura hau. Koldo Eleizaldek 1907an *erail* ustezko aditzetik *darailzot* zerabilen Nor Nori Nork sailean
- Aranak baieztapeneko *badator* eta baldintzazko *badator* bereizteko, baieztapena *baidator* idazten zuen
- Aranaren berrikuntza da mendebaleko *a+a* > *ea* bilakabidea pluralera eta inesibora hedatzea
- Loturazko *e* kentzen zuen Aranak: *etxean* baina *egunan; etxetik* baina *egundik.*
- Izen berezi eta izenordainetan genitiboaren atzizkia kentzen zuen: *Jainko-Ama, neu-bekokija*
- Hedadura eman zion *-dun* atzizkiari: *eldu jatan zori-okerrdun egun bat*
- Jendeen deituretara hedatu zuen *-tarr* atzizkia; esate batera, *Andonegi'tar Julene* idatzi ohi zuen *Julene Andonegi* beharrean
- Kontsonantez bukatu izen bereziei ergatiboan *-ak* eransten zien
- Aranaren ondoren berikuntza batzuek hein bateko arrakasta izan zuten; Arriandiagak *onek, orrek, arek / oneik, orreik, areik* bereiztea proposatu zuen,

Arratian legez, erakusle singularra eta plurala berdinak izan ez daitezen. Baita ergatibo singularrean *gixonak, andreak* eta pluralean *gixonaik, andreaik* bereiztea ere, baina Aranak ekialdeko ohitura —*gixonak* / *gixonek* bereiztea— nahiago zuen

### *5.1.2. Garbitasunaren bilakuntza*

Hizkuntza bati kanpo eragina kimatzen saiatzea, geografikoki ondoan duen hizkuntza baten edo batzuen eragina mugatzeko nahiz garbitzeko saioak egitea, ez dira ezezagunak Euskal Herrian, baina anitz lekutan egin da hori, batez ere hizkuntza eragilea botere handikoa delarik. Aranaren euskal iraultza lexikoaren garaikoak dira Turkiakoa edo Estoniakoa; turkiera errotik garbitzeko saioa egin zuten, arabiar eta iraniar maileguak kentzeko. Bi herrialde horietan hala idatzizko nola ahozko mintzoan eraberritzea arrakastatsu izan baldin bazen, eskola eta komunikabideak eskutik edukitzeari dagokio hori.

Berebat, Azkueren gramatikan *agur egin, amets egin* eta *usin egin* erako perifrasiak bultzatu ziren eta *agurtu, amestu, usindu* puska bakarreko aditz nagusiak baztertu, azken hauek erdal eragina zekartelakoan. Iraganean ez ziren ezezagunak honelako saioak: aitzineko garaietan ere garbizale jokatu zuten idazle eta euskalari anitz daude, eta Larramendiren —eta larramenditar hoberenen— urrezko araua izan zen (ik. 7. kap., § 4.5.3.1). Baita lehenago ere: esaterako, 1696an katixima argitaratu zuenean, Athanase Belapeire zuberotarrak garbizale jokatu zuen. Baliatu zuen J.-B. Bossuet-en frantsesezko iturria itzultzean eta Materraren euskal pasarteak egokitzean, mailegu gordinik baliatu gabe jardun zuen, Materraren hautu batzuk euskarago ziren beste hitz batzuen bidez ordaindurik. Intxauspek Bonaparteri idatzi zion (1858/II/14), aitortuz Belapeireren 1696koak Oloroeko 1706ko eta 1743ko katixima zuberotarrak aise gainditzen dituela. Belapeireren joera garbizalearen berri eman digu Pello Agirreren ikerketak (2010).

Ondotik, Martin Maisterrek 1757an *Jesu-Kristen Imitacionia* zubereratu zuen, baina Intxauspek saio hura ez zuela gogoko eta, 1885ean beste proposamen anitzez ere garbizaleago bat egin zuen. Bonaparteri ziotson (1884/I/10) testua aiseago ulertzeko eta euskarago izateko egin zuela; berebat, 1858/V/18an Bonaparteri ziotson 'tribu' adierazteko zubereraz *gizeli* baliatu beharko litzatekeela eta *zuzen egiten* hobesten zuela *jüjatzen*-en kaltetan (1858/VI/29).

Hitzen historiak, hitzen jatorri garbiak eta hitzak ahoskatzeko eta idazteko erak kezkatzen zuten Arana; euskaldunek euskaldun irauteko inguruko herrietarik ahalik eta bereizien bizi behar dutela uste zuen eta horregatik, euskarak latinetik harturikako mailegu zaharrak oro, euskal sorburua duten hitz berri garbien bidez aldatu nahi izan zituen. Aranaren *Lecciones de ortografía del euskera bizkaino* lanean lehenago Astarloak

hotsez ekarri ikuspegi bera dago: hark bezala, ez zituen euskalduntzat jo [x] hotsa, /f/ fonema eta *v* ezpain-horzkaria. Astarloak bezala, Aranak uste zuen euskaraz *muta cum liquida* kontsonante taldea ez dela zilegi.

Aranak ez zuen Larramendiren hitz berrien sorta maite, haren lana ez zuen baliatu, eta hark sortu hitz zenbait iragazi baldin bazitzaion —*biztanle, ekurrte* 'zerbitzua', *oguzi* 'ahoskatu'—, edo hark bultzatutakorik —*kondaira* 'narrazioa, historia'—, oharkabean izan zen; Larramendirena den oro baztertu zuen abandotarrak. Euskal hiztegiaren garbiketa saio handi haren eragile nagusia izan zenarentzat, hitza da errealitate fonikoen txertagunea; esate batera, ez zen aditz laguntzaileen morfologiaz kezkatu, baina aditz nagusiez bai. Lehen lanetan hitzen etimologia aztertzeari ekin zion, hitzen sorburuak aurkitzeak herriaren historia ezagutzeko aukera ematen duelakoan. Aditz nagusiaren alorrera berrikuntza guti batzuk ekarri zituen Aranak: *bijau* atzizkia eta *indu* edo *katu* morfemak bultzatu zituen (Laka 1987: 32). J. M. Zabala gramatikariaren iritziari jarraikiz, *berori* izenordaina ere, erdararen eraginez sortua dirudiena, erabat arbuiatu zuen.

Haren sendagintza euskara gaztelaniaren eraginetik urrundu nahian zetzan. Aranak bere politikako egitasmo abertzalearen barrenean zekusan hizkuntza berpiztu eta garatzea: euskaldunen hizkuntza, arraza, odola, herria, historia… horiek oro Abandoko abertzalearen xedea ziren; batera ageri dira haren gogoan, idatzi zituen idazkietan aski identifikaturik dakuskigu adigaiok, bata bestetik bereizi gabe. Arana eragile eta bultzatzailea zen, hala politikan nola hizkuntzaren normalizazio-berreskuratzean: bai corpus plangintzan, baita euskararentzat etorkizuneko estatus egoki eta duinagoa bilatu nahian ere.

Aranaren iraultzak maileguak baztertzea ekarri zuen, baina horrekin batera, hainbat bazterretako euskal hitz, erabilera urrikoak zirenak bultzatzea, eta arkaismoak hedatzea eta erabiltzea nahi izan zuen; aldiz, aitzineko Lore Jokoetan ez zen honelakorik gertatu. Larramendirena den oro baztertu zuten sabindarrek; maisuaren lexikoaren berrikuntza hau hein batez Gipuzkoara iragan zen, baina ez horrenbeste Ipar Euskal Herrira: Lhande eta Etxepare Bidegorri dira salbuespena; ik. honen *Beribilez* narrazioak (1930), non Hegoaldeko idazleen eragina eta idatzizko eredu batura heldu nahia sumatzen baitira. Oxobik ere Hegoaldeko garbizaletasunaren isla ageri du bere lanean, hitz berri zenbait eta aditz trinkoen erabilera. Garrantzi handia eduki zuen Oxobik bere garaian, olerkari nabarmenenetarik zen, baina hitz laua ere landu zuen, bereziki alegiak (1926).

Gipuzkoan Larramendiren eraginak luzaz iraun zuen, 1911ko *Baserritarra* aldizkarian esaterako, nahiz noizbehinka Aranaren hitz berriak ere sartzen zituzten: *aberri, ludi* 'lurra, mundua', *sendi* 'familia'… Ordura arteko garbizaletasunak ez zituen euskal hitz latinetikakoak baztertu, Arana arteko garbizaletasunaren kezka, euskaraz adierazi ezin diren ideia modernoak nola eman izan zen eta horretarako hitz berriak asmatu ziren. Lore Jokoen

belaunaldian hitz jasoak larramenditarrak dira, baina egunorokoak, berriz, arruntak; Lore Jokoen garaian hitz jasoak ez dira autorearen arabera ageri, gai teknikoek hala eskatzen dutenean ageri dira hitz berriak, erregistro kontua da; ordea, Aranak euskal erregistro oro berdintzera jo zuen, latinaz edo erdaraz euskara oro garbitzea baitzuen helburua.

Azkuek anitzez ere euskara gehiago zekien Aranak baino eta abandotarrari leporatzen zion elkarketan eta eratorpenean hitzak fonikoki sobera laburtzen edo higatzen zituela: ik. *goteun* 'izpiritu sandua, *gogo + deun', ikurrton* 'sakramentua, *ikur + deun', ingi* 'papera, *eun + -ki', txadon* 'eliza, *etxe + done*', *txaide* 'karrika, *etxe + bide*'. Aurpegiratzen zion hitz berri sobera sortzen zuela, ez zituela probesten hizkuntzan zeuden zokoetako hitzak, horiei erabilera geografikoa heda zekiekeela uste zuen, arkaismoak ere etorkizunerako euskaran erabil zitezkeela zeritzan Azkuek: esate batera, Aranaren *saneurri* 'salneurria' beharrean, Azkuek Mundaka eta Bermeo inguruko *domu* proposatzen zuen. Ez dago Aranaren hitz berririk Azkuek ordaina aurkitu ez zionik.

Azkuek herriaren ahotik bildu hiztegi hirukoitzak (1905-06) garrantzia izan zuen euskalgintzan: bertatik hartu zituzten aranazaleek eta bestek maileguak ordezkatzeko eleak, arkaismoak nahiz Euskal Herriko zoko zenbaitetako hitzak, orduko literaturara joan zirenak. Hiztegi honek ordezkatu zuen Larramendirena behin betiko eta XX. mendeko hiztegigintza markatu du. Olabide bat paradigmatikoa izan zen, Azkueren hiztegia anitz baliatu zuen. Arkaismoaren adibidea izan daiteke *(h)endore* 'alkatea', 1596ko *Refranes y Sentencias* izeneko bilduman ageri dena, Azkueren hiztegiak dakarrena eta garai hartan berriz erabiltzen hasi zena.

Aranaren ustez euskarak eratorpenean eta hitz elkarketan dohain handiak ditu giza arimaren adierak emateko. Aranak ez zuen tradizioa jarraitu eta Azkuek ez bezala, hitz berriak sortzen zituen, besteren artean, ez zuelako ikusten hitzak euskara guztiarenak direnik, hitzak haren ustez euskalki bakoitzarenak dira: Azkuek ez bezala jokatu zuen. Aranak nahi zuen euskalki bakoitzeko aldaera garbienak jende guztienak izatea, ez goi mailako jendeenak bakarrik.

Astarloaren ideiak baliaturik, Aranak hotsak erantsi, aldatu eta kentzeko askatasuna hartu zuen: elipsia, metatesia eta epentesia erabili zituen. Askatasun horren gibelean, ordea, eredu bat zegoen eta hein handi batean arau fonetikoak aintzat hartzen zituen, baina erregela fonetikoek beren aplikazioan izan ohi duten ingurunearen baldintza Aranak ez zuen behar hainbat asetzen. Campionen arabera, Aranaren sistema naipeen gazteluaren iduria da, sorburuko hitzen forma eta etimologia ezagutu beharra dagoelako.

Hitzen sorreran eta beraz hitz berriak eratzean, Aranaren ustez euskal fonetikak euskal arimaren isla den aldetik, zeregin garrantzizkoa du. Aranak toponimian aurkitu uste zuen hizkuntzak galdu dituen hainbat erro eta hizki: *ain, oin, gon, ero, -di, -eta, -aga*… Sortu zituen hitz berriak ez dira entzutean ulertzen: *bakal* 'monarkia', *geztoki*

'infernua', *goizparr* 'ebanjelioa', *gokaxo* 'purgatorioko arima', *guturi* 'hiria', *jaupa* 'meza', *txauno* 'kapera', *zorun* 'zoriontasuna'… Arau fonetikoak erruz erabili zituen hitzen sorreran: *begi azal* > *betazal* den legez, *abegi* + *-aldu* > *abetaldu* da eta *begi* + *-aldu* > *betaldu* 'erakutsi', *lagi* + *-ari* > *latari* 'idazlaria', *lagi* + *-arr* > *latarr* 'legezkoa, zilegi', *lagi* + *erri* > *laterri* 'estatu politikoa'; *gogo* > *got-* laburduran oinarri harturik, *goteun, gokaxo* 'purgatorioko arima', *gopatz* 'erlijioa', *goterrki* 'elizbarrutia', *gotuts* & *gotutz* 'aingerua', *gotzalle* 'apezpikua' hitzak eratu zituen.

Ematen du ingurunerik ez dagoela bilakabideetarako: euskaraz hitz guti zenbaitetan inoiz *eu* > *i* gertatu baita, hartara *eun* + *-ki* > *ingi* 'papera' sortu zuen eta baita *ikurr* + *eun* > *ikurrin* ere; inoiz euskaraz *ia* > *e* gerta daitekeenez, hartara *bialdu* > *beldu* eratu zuen; inoiz *oi* > *u* gertatu denez, *goiko* + *izparr* > *goizparr* & *guzparr* 'ebanjelioa' edo *goi* + *uri* > *guturi* hitzak eratu zituen, baina baita *goi-buru* 'lema' ere; euskaraz inoiz *au* > *o* gertatu ohi da, eta beraz *baso* + *txauno* > *basatxono* 'ermita' da, *ingi* + *auski* > *ingoski* 'orrialdea', baina *txaunburu* & *txaumuru* 'erretorea' dakar, monoptongatu gabe, *txadon* > *txaun* + *buru* eginez.

Aranaren hitz berriek beren baitan daramatzate oinarri hartutako hitzek denboran zehar jasan dituzten laburdurak: aldaera eufoniko eta ekonomikoak ateratzen dira, fusionatuak eta eliptikoak, aztertzeko zail direnak. Motibazio etimologikoa galdurik, bloke zehatzak dira hitz berriok, ez dira anbiguoak eta gogoan hartu behar dira, maileguen gisa buruz ikasi behar dira. Aldiz, Azkuerenak ulergarriago dira eta anbiguoago, ez dago garbi Azkueren hitz berriek zehazki zer adierazten duten: Azkueren *guda-zapi, erri-oial, gudoyal* vs. Aranaren *ikurrin*; Azkueren *su-gurdi* & *su-burdi, orgadi, kotxerrenka* vs. Aranaren *bultzi*.

Aranak bultzatu hizkuntza-ildoaren jarraitzaile leiala izan zen Arriandiaga apez elantxobearra, abandotarraren ideiak azken muturreraino eraman zituena; aditzaren morfologiako kontuetan garbizaleen taldeko teoriko nagusia zen eta Azkue gaztearen *Izkinde*-aren ondarea bildu zuen; 1929-1936 bitarte iraun zuen Bilboko *Euzkerea* aldizkarian ere sabindarren eskolako hizkuntza-ikuspegiak azken mugaraino eraman ziren; eskola haren muina Aranaren *Lecciones de ortografía del euskera bizkaino* saioa dugu.[11]

Dakargun lehen zerrenda honetan Aranaren asmazioak datoz, garai hartako euskal liburu garbizaleetan ageri direnak, baina gerora indarrik eta erabilerarik gabe galdu direnak: *bakaldun* 'erregea', *basatxono*, *bixikerabijau* 'bizimodua aldatzea', *donoki* 'zerua',

---

11. Liburuak badu eranskin bat olerkia egiteko arauez diharduena; Lourdes Otaegiren iritzian, haren proposamenek halako berrikuntza zekarten, literatura moderno jantziari dagozkion zenbait ezaugarri. Haren eragina ez zen Emeterio Arrese, Luis Jauregi «Jautarkol» edo Klaudio Sagarzazu «Satarka»-rengana heldu, baina Lauaxeta edo Lizardirengana bai (www.basqueliterature.com).

*gentz* 'bakea', *gopatz*, *gotzon* 'aingerua', *gotuts* & *gotutz, gotzalle*, *guturi*, *ingi*, *ingoski*, *irasle* 'sortzailea', *izpar*, *latari*, *laterri*, *lepaldu* 'zerbaiten ardura norberak beregain hartzea', *lobel* 'likidoa' izena, *notin*, *txadon*, *txaide*, *ziñopa* 'martiria'. Haren uztako beste berrikuntza batzuetan, hitza sortu ez, halako hots egokitzapen bat egin zuen: *lagi* 'legea', *pantzera* 'frantses hizkuntza'.

Hark sortu hitz zenbait garai batean errokatzen hasi baziren ere, egun ez dira entzuten; giro euskaltzale garbizalean edo ikastolan entzun zitezkeen duela hiruzpalau hamarkada, ingurune jasoan beharbada; orduan ere, ele hauek guztiek ez zuten arrakasta maila bera izan, baina orain ez bezala, orduan ez ziren ezezagunak: *abenda* & *enda* 'arraza', *argittaldari* 'inprimategia', *edesti* 'historia', *errti* 'artea', *espetxe* 'gartzela', *idazti* 'liburua', *irarkola* 'inprimategia', *izparringi* 'egunkaria', *kulatz* 'idazketako puntua', *ludi*, *orle(g)i* 'berdea', *sa(l)neurri*, *sendi*… Gisa berekoak izanik ere, ez dira Aranarenak *hegazkin* hitza, erdal 'avión / avion' adierazten duena, egun ere anitzek baliatzen dutena, edo egun ia entzuten ez den *urrutizkin* 'telefonoa'.

Aranaren ingurunean finkatu ondotik, idazleen eta hiztunen artean arrakasta erdietsi duen hitz sorta bat ere bada; ez dakargu adierarik, egungo euskararen zernahi hiztegitan ageri baitira: *aberri* & *abertzale, abestu*, *alderdi* 'alderdi politikoa', *antzoki*, *(h)arrpide* & *(h)arrpidedun, (h)auteskunde*, *idatzi*, *zenbaki*. Uler daitekeenez, Aranak asmatu edo sortu zituen eta haren jarraitzaileek bultzatu eta erabili zituzten hitz berri guztiek ez zuten arrakasta bera eduki, baina zenbait hitzek egun ere bizirik diraute euskaldunen aho-idazkietan: esaterako, XX. mendearen bigarren erdian oraino ere baliatzen zen *bultzi*, 'tren / train' adierazten duena; nork esan lezake zergatik baztertu duen hitz hau euskara baliatzen duen gizarteak?

Aranak euskal lexikoa garbitzeko antolatu zuen corpus plangintzak luzaroan iraun zuen, baina ez zuen nahi bezalako emaitzarik ekarri: errotikako aldaketa zekarren euskal lexikora, mugarik gabea, eta Abandokoak ez zuen herri xehearen erekiko zubigintzarik landu. Aldiz, asmatu zituen euskal pertsona izenek berebiziko arrakasta izan dute Euskal Herrian, bereziki Hegoaldekoan: *Alazne, Ander, Edurne, Eskarne, Garbiñe, Gorka, Idurre,* Iñaki, Jagoba, *Janire, Joseba, Kepa, Koldo, Maitane, Mikel, Zuriñe…*

Garai hartako idazle gehienengana iritsi zen hizkuntzaren garbitasunaren aldeko joera: Ipar Euskal Herrian eragin gaitza zuen Hiriart-Urruti idazle hazpandarrak interferentzia lexiko eta fonetiko ugari zekuskien euskaran, *s/z* txistukarien artekoa, esaterako. Euskara garbia maite zuen hark eta haren idazmoldeak ezagun du hori. Landerretxek kalko semantiko berriak gaitzesten ditu: *herri hunentzat badut flako bat* erdaraz 'j'ai un faible pour cette paroisse' litzatekeena eta euskal senezko *herri hunentzat badut halako bat, atchikitasun berezi bat* esaera alderatzen ditu. Vinsonek ere berdin dio: *ez dezaket erran, azken hamabortz urthe hautan, bere garbitasunetik zembat galdu duen euskarak* (1909).

Broussain bat ere kezkatzen zen euskara garbiaz: mundu berriak zekarren teknikaren alorra euskaraz landu ahal izateko, euskararen beraren barrenetik hitz berriak sortzea nahi zuen, zazpi herrialdeetan baliatuko zirenak, euskara baturako balioko zuten euskal hitz teknikoak; barreneko sorrera garatzea eta hizkuntzaren batasuna ziren Broussainen xedea. Campion iruinsemea ere jabetu zen ordura arte ez bezalako erdal hitz, ebakera, joskera eta adierez betetzen ari zela euskara, Hegoan nahiz Iparrean euskalgaiztoa hedatuz zihoala. Bizimodu modernorako sortu zituzten Juan Antonio Mogelek *eratsi & iraatsi,* 1920 aldera *idatzi* eran nagusitu zena, Hiribarrenek *burdinbide* eta Hiriart-Urrutik *beribil*, baina bizimodu moderno hartan euskarak defizit lexiko nabarmena zuen; nolanahi ere den, arazo hau ez zen garai hartan konpontzen hasi, auzia geroko gelditu zen.

Morfologian eta sintaxian ere hizkuntza garbiaren, erdaren kutsurik gabekoaren aldarria agertu zen han eta hemen: esaterako, morfologian Azkuek eta garbizaleek ez zuten *-en gainean* posposizioa maite; Olabide Bibliaren itzultzaile arabarrak *-tzaz*-en bidez ordaintzen zuen; xx. mendean Hegoaldean arrakasta handia lortu zuen *-(r)i buruz* posposizioak. Sintaxian, erlatibozko perpausetako anaforikoak gaitzetsi ziren; Intxauspek Bonaparteri 1858/II/14an idazten zionez, *sagarra zoinek min egin beiteit* baino, apainago da *min egin deitan sagarra.* Azkuek gramatikan berdin jokatu zuen (1891: 84) eta irizkide zituen Altube, Lafitte eta Hiriart-Urruti ere. Apez gatikar batek Trebitsch-i honela kontatzen zion 1913an: *emen erri onetan deukogu erreka eder bat, zeñetan dagozan arrankari, aingire ta loiñe asko*.

Sintaxi garbia da Altuberen lan nagusiaren helburua, *Erderismos* (1929). Bertan, perpausaren hurrenkeraren legeak eratu zituen, kanpoko erdal eraginak euskararen barne izaera honda ez dezan; iritzi horrek egun arte dirau eta islarik nabarmenena aditz nagusia perpausaren bukaerara sistematikoki eramatean datza. Batzuen ustez *Erderismos*-en helburua ez da euskaldunek historian zehar nolako sintaxia erabili duten erakustea, euskal sintaxia erdal sintaxiaren aurka jartzea baizik. Altuberen lanaren arrakasta gaitza izan da, besteren artean, aranazaleek ere haren ideia onetsi zutelako. Orixek zioenez, beste meriturik ez balu ere, perpausaren hitz hurrenkeraren Altuberen araua bikaina da. Dena den, gogoraraztekoa da arlo lexikoan Altube ez zela hitz garbizaleen aldezle izan. Sintaxiaren arloko garbizaletasun honek erro sakonak ditu lehengo eta oraingo euskal idazleen artean. Azkuek testu batean egin zuzenketa batek erakusten digu joera nagusia zein den: *zergatik eztarria dan* → *eztarria dezulako.*

Hizkuntza garbiaren ardura xx. mendean areagotu zen, bi hizkuntza handi eta indartsuren artean baitago euskara. Nornahik uler lezake bi hizkuntza handiren erdian —eta are menpean— dagoen hizkuntza ttiki batek baitezpadakoa duela garbitasun eta zaintzarako joera; hori da lerro hauek idazten dituenaren iritzia, bederen.

### *5.1.3. Hizkuntzen naturalismoa eta darwinismoa*[12]

xix. mendearen bigarren zatiko euskalaritzan, hizkuntzari begiratzeko moldeez eta egiten ziren gramatikez kritika ugari jaulkitzen zen. Hizkuntzalari berriek beren ereduak positibistatzat jotzen zituzten eta aitzinekoen lanak metafisikotzat (Gómez 2007: 175). Achile Luchairek, van Eysek eta Vinsonek orduko gramatikari euskaldunen lanean metodorik eza kritikatzen zuten. Garai hartako ikertzaileen artean, Hyacinthe de Charencey konte frantziarra eta Intxauspe zuberotarra dira kritika gehien bildu zutenak; Vinsonek Intxausperen hizkuntza-teoria metafisikotzat jo zuen.

Frantziako hizkuntzalaritza naturalistak Azkuek eta Aranak ez bezala zekusan hizkuntzen garapena. Astarloaren iritzian, Jainkoak eman perfekzioa duen lehen hizkuntza naturala euskara da. Astarloak eta Azkuek uste zuten, denboraren iragan luzea jasanik, euskaldunek berek euskara hutsunez eta ahulgunez bete dutela. Azkue gaztearen arabera, euskal hizkuntza hondamendirantz zihoan, baina naturalista frantziarrek honelako auziak alderantziz zekuskiten: haien ustez, hizkuntzen garapenak hobekuntza bidean ezartzen ditu hizkuntzak behar den bezalako bilakabidea gertatuz gero. Euskal Herrian ere bazituen aldezleak hizkuntzalaritzako joera honek, Vinson eta Unamuno gaztea.

Ohiko iritzi-emaile eta idazle ziren orduko Euskal Herrian Vinson frantziarra Baionan eta Unamuno Bilbon. *Crítica del problema sobre el origen y prehistoria de la raza vasca* doktoretza tesia defendatu zuen bilbotarrak 1884an eta 1886koa du *Del elemento alienígena en el idioma vasco* artikulua. Vinson errepublikazalea, berriz, Parisen 1867-1916 artean argitaratu zen *Revue de Linguistique et Philologie Comparée* [RLPhC] aldizkariaren zuzendari izan zen garai batez eta haren jabe bukaerako garaian; luzaz izan zen hizkuntza dravidiarren ikertzaile eta hizkuntza kreolez ere arduratu zen. Harrigarriro, Vinsonek euskara gai harturik egin zuen analisia, hizkuntza dravidiarrez egin zuenaren arras iduria da. 1876an zioenez, India hegoaldeko dravidiarrek ez zuten beren gizaki-izaera aberastu herri indo-europarrak bertara iritsi ziren arte (Oihartzabal 2008: 678). Hizkuntza kreolez ziharduela, honela zioen 1889an: *hizkuntza apal batzuek hizkuntza indo-europar goragoekin elkartzeko edo nahasteko zortea izan dute*.

Vinsonen ustez, gizarteko orduko aldaketa demografiko, ekono-tekniko, politiko-operatibo eta sozio-kulturalak ziren euskara eta euskal kultura ahultzen ari zirenak. Vinson eta Unamuno gaztearen ikuspegi esentzialistaren arabera, berezko gaitz barrenekoa du euskarak: hizkuntza eranskaria (aglutinantea) izanik, hizkuntza malgukariek (flexiboek) baino gaitasun mugatuagoa du giza komunikazio konplexurako eta hartara, alfer-alferrik da hizkuntza hau doitzen, gaitzen eta hobetzen jardutea. Ez dago euskara adigai jaso eta abstraktuak adierazteko eta horregatik, bi jaun hauen ustez

12. Gómez (2007) eta Oihartzabal (2008) baliatu ditugu gehienik azpiatal honetarako.

euskaratik bi erdaretara mintzaldaketa gauzatzea —euskaldunak erdaraz mintzatzea eta bizitzea— zen etorkizuneko jarrera zentzuzkoena Euskal Herriarentzat. Bizitzaren lehian euskara galtzaile zekusaten biek. Ramón Menéndez Pidal filologo espainiarra ere iritzi honen haritik ibili zen garai hartan; euskararen corpus plangintzarekiko jarrera probidentzialista zeukan hark: *hil behar baldin badu, utz dezagun euskara lasai eta bakean hiltzera*, baina gaztelaniari dagokionez ez zuen honelako jarrerarik (Zalbide 2003: 33).

1860ko hamarkadaren erdian Europako mendebalean hizkuntzalaritza naturalista sortu zen: Honoré Chavée, Abel Hovelacque eta August Schleicher hizkuntzalariek bultzatu zuten. Naturalisten arabera, maila apaleko hizkuntzen galera automatikoa joera nagusia da, baina dakigunez, ikuspegi hau edukitzeko berezko ebidentziarik ez dago, ezagunak diren hizkuntzen historiak ez digu erakusten beren patua hizkuntza-eragile batzuek determinaturik dagoenik (Oihartzabal 2008: 681). Darwinismoak izaki bizidunen eboluzioaz eta hautapen naturalaren legeez sortu zuen teoriarekin bat zetorren naturalismoa eta uste nagusi hori hizkuntzari txertatu zion. Beren ustean, hizkuntzen garapen mailan, hizkuntza isolatzaileak (aislanteak) ondotik hizkuntza eranskari bihurtzen dira eta azkenik hizkuntza malgukari. Vinsonek eta Unamunok uste zuten ez zuela etorkizunik maila malgukari goren horretara heldu ez den euskara eranskariak. Errealitate modernorako prestatzeko, hoberena euskara ahanztea eta erdaraz jabetzea zuten euskaldunek. Azkue batek, ordea, hizkuntza eranskaria izateak kalterik ez dakarrela argudiatzen zuen 1888an Bizkaiko Aldundiko Euskara Katedrara aurkeztu zuen txostenean.

Vinsonek eta Unamuno gazteak Schleicher indoeuropeista alemaniarraren eragin handia izan zuten. Hizkuntza-naturalismoaren aitzindari izan zen Schleicher-ek hizkuntza izaki bizidunak legez garatzen dela irizten zion eta hizkuntzalaritzak gizakiaren fisiologiaz diharduela. Schleicher-entzat «natural» adjektiboak esan nahi du lege batzuen menpe dagoela hizkuntza, gizakiaren borondatetik kanpo eta askatasunik gabe (Gómez 2007: 118). Hizkuntzalaritzak, beraz, hizkuntzaren alde «naturalena» izango du aztergai, fonetika eta morfologia. Naturalismoak gizaki-hiztunetik eta gizartetik kanpo zekusan hizkuntza, naturaren arloko ente beregain bat balitz bezala, naturaren legeei atxikirik, ez zekusan kulturaren edo gizartearen baitako errealitatetzat; naturalistek ez zioten hizkuntzen kanpo historiari so egiten.

Beren aitzindari alemaniarrak bezala, Vinsonek eta Unamuno gazteak uste zuten hizkuntza naturalak monosilabismotik eranskari izatera iragaten direla eta behin izaera hori edukitzean, malgukari izatera jotzen dutela. Maila gorenera iritsi diren hizkuntzak malgukariak dira, arimaren eta izpirituaren mugimenduak eta pentsatzeko ekintza hobekien adierazten dutenak, esanahia eta erlazioa bateratzen dituztenak (Schleicher 1852). Euskara ez bezala, frantsesa eta gaztelania hizkuntza malgukariak dira. Vinsonen arabera, hizkuntza

eranskariak zibilizazio maila apalari dagozkio eta non eta ez diren beste hizkuntza mota batzuen eraginpean sartzen, ez dira maila gorago baterantz arrakastaz garatuko.

Schleicher-ek zioenez, malgukari izan ondotik, hizkuntzaren garapenaren ondorioz flexio-sistemaren endekatzea dator eta ondotik hizkuntza suntsitzea, eta Vinsonek ere honela zioen 1877an; Schleicher-en ustez hizkuntzaren gibelamendua gauza naturala da eta beraz, hizkuntzalaritzaren aztergai izan behar du. Vinsonek zioenez, hizkuntza eransleak bestelako hizkuntza (isolatzaile edo malgukari) baten eraginez bakarrik abiatu ahal izan dira iraungitzeko bidean, eta hauxe uste zuen dela euskararen egoera. Unamunok uste zuen euskara aditz arloan eransle izatetik malgukari izatera iragaten ari zela: *como el paso de la antigua conjugación aglutinante a la conjugación analítica con el auxiliar*. Vinsonek 1867an zioenez, malgukari izatetik hurbil dagoen aldi bateko hizkuntza da euskara eranslea.

Euskal hiztegi bakana ere salatu zuten garai hartan hizkuntzalari kanpotar nahiz etxeko zenbaitek, adigai abstraktuak edo ideia orokorrak adierazteko ez duela balio: Francisco Grandmontagne, Hovelacque, Ramiro de Maeztu, Unamuno edo Vinson aipa ditzakegu. Ideia hau Hovelacque-k jaulki zuen lehenik, baina Gomezek dioenez, Vinsonen iritziari jarraituz adierazi zuen hori (2007: 169). Hovelacque eta Vinson hizkuntzalarien ustez euskal lexikoa ez da gai goi mailako kulturarako. Campionek 1899an ideia honi aurre egin nahi izan zion (Zalbide 2007b: 982). Hona Unamunoren hitzak (1884): *el euskera es pobrísimo en voces significativas de objetos espirituales o suprasensibles y hasta carece de términos que expresan ideas abstractas en general*. Luchaire ere irizkide zuen esan honetan.

Ezin ukatu da euskaldunen eta Vinsonen arteko orduko eztabaida frankok hizkuntzaz kanpoko osagaiak dituela: Vinsonek eta Unamunok euskal foruek askatasun izaerarik ez dutela irizten zioten, baina biziki minbera da gai hau. Vinsonek zioenez, bestalde, zibilizazio eta aitzinamendu oro bat-batean desagertzen da Espainia eta Frantzia elkartzen diren ingurumari geografiko horretan, Euskal Herrian. Euskaldunen adimena loak harturik dagoela zioen Vinsonek (1867), apezen eragin handiak euskaldunen aitzinamendua galerazi duela; ik. Aldekoa (2008: 217, 223-224, 228). Vinsonek uste zuenez, euskara ahanzten dutenean euskaldunak beren auzoen pare izatera iritsiko dira; ez zuen uste euskara XIX. mendeko izaera demokratikoarekin ongi ezkontzen zenik (1878). Vinsonek eta Unamunok uste zutenez, hizkuntza eranslea duen euskal gizartea eredu militarrean aingura botarik dago, baina hizkuntza malgukaria duten espainiar eta frantses gizarteak eredu industrialari dagozkio. Ereduen ikuspegi hau H. Spencer-en gizarte-darwinismoari dagokio: antzinako gizartea → gizarte militarra → gizarte industriala da garapenaren norabidea (Gómez 2007: 174). Euskal Herria Espainiako gizarte industrialean sarturik baitzen, euskara galtzea hobe zuela irizten zion Vinsonek.

Bonapartek, Campionek eta Manuel Gorostidik Vinsoni aurre egin zioten: Euskal Herrian kultura eta alfabetatze maila gora zegoela zeritzoten eta euskaldunak ez direla arloteak. Vinsonek euskaraz erantzun zien, Iruñeko *Revista Euskara*-n (1879): euskara maite zuela esaten zien, baina aitzinamenduak etenik ez duela izanen adierazirik. Frantziako prefekturak Ipar Euskal Herriko eskoletan euskara galeraztean, paradoxikoki begi onez ikusi zuen hau Vinson errepublikazaleak 1879. urte hartan berean, Frantziako hezkuntza nazionalaren lehen xedea frantses jendeak sortzea dela uste baitzuen.

Beñat Oihartzabal hizkuntzalariak dioen legez, naturalismoak ez zion hizkuntzalaritza teorikoari aitzinamendurik ekarri, lotura arras hertsia zeukan antropologiarekin eta ez zituen hizkuntzalaritza historiko-konparatiboaren hatsarreak aintzat hartu. Ezagun denez, konparatibismoaren eskola da 1870etik aitzinera hizkuntzalaritza historikoari bultzadarik handiena eman ziona (2008: 669). Antoine Meillet-ek 1932an zioenez, naturalistak ez dira *argitasuna agertu zitzaien hizkuntzalari amateur* batzuk baizik.

### 5.2. Gramatikografia

Euskal gramatikak idaztean XIX. mende bukaera arte ohikoa zen hizkuntza klasikoen egitura eta unitate gramatikalak oinarri hartzea, unitate edo egitura horiek euskararen deskribapen-azterketari ere txertatzea, baina honela ez dira euskal gramatikaren goien-barrenak egoki azaltzen. Hurranen orrialdeetan aldi hartan nabarmendu ziren Herbehereetako bi gramatikariren berri dakargu; garbi dago honelako lan batean ezin sar ditzakegula izan ziren hizkuntzalari guztiak.

#### *5.2.1. Van Eys*

Van Eys-ek 1879ko *Grammaire Comparée des Dialectes Basques*-en euskara deskribatzen asmatu zuela irizten dio Sarasolak (1989: 89): garai hartan Bonapartek, Jean-Pierre Duvoisinek edo Intxauspek holandarraren lana kritikatu zuten, baina garai hartako Europako hizkuntzalaritzaren ereduak baliatzen zituen holandarrak euskal gramatikariei kargu hartu zien, baizik eta argitu ezinik zeuden euskararen hainbat ezaugarri ez zirela hizkuntzaren «bestelakotasuna»-ren ondorioa, euskalarien ezezagutzaren emaitza zirela. Hizkuntzalari honek hainbat argitasun ekarri zizkigun eta euskara deskribatzean, hizkuntza klasiko edo greko-latinoen azter-ereduak baliatu gabe, lanabes egokiagoen bidez euskararen hainbat eta hainbat atal argitu zituen; esate batera:

- ez zuen ortografia hutsaz jardun, sistema fonikoaz arduratu zen eta euskal hotsak taula batean eratzen lehenbizikoa izan zen
- euskarak ez du deklinabiderik, atzizki sistema baizik; baieztapen honek Duvoisin eta Gèze harriturik utzi zituen; argi zekusan «nominatibo» edo «akusatibo» erako

terminologiak nahasketa dakarrela, «subjektu» eta «osagarri» kategoriak egokiago direla
- euskal izen morfologiaren bilakabide historikoaz arduratu zen: sintagmako morfemen kateaz; Humboldt-ek legez, euskal *-a* mugatzailearen oinarrian **ar* dagoela proposatu zuen; honezaz landa, pluralekotzat jo zuen *zu* izenordaina, Duvoisini guztiz harrigarri iruditu zitzaiona
- euskal aditza desdramatizatu zuela esan daiteke, lehen ikertzailea izan zen adizki egituren eta hauen osagaien analisi funtzionala egiten; halaber, euskararen hots legeek aditzaren auzian duten garrantziaz jabetu zen
- euskaraz aditz laguntzaile bat baino gehiago dagoela zeritzon

### *5.2.2. Uhlenbeck*

Holandar honi zor diogu XIX. mendearen erdiko euskal erroen sailkapen osoena; ik. Lakarra (1997b: 584-588). Eginahalak egin zituen euskarak omen lituzkeen estrato eta osagai desberdinak erakusten; euskara «hizkuntza mixtu»-tzat hartu zuen. Erro monosilabikoak sailkatu eta deskribatu zituen: bokalez, diptongoz, kontsonantez, txistukari afrikatuz bukatzen direnak eta forma erreduplikatuak; bi silabako erroak ere aztertu zituen: VCV, CVCV, VCVC, CVCVC, CVCCV, VCCVC, CVCCVC; baita diptongodunak ere: DCV, CDCV, DCVC, CDCVC, VCD, CVCD, VCCD, CVCCD, VCDC, CVCDC, VCCDC, CVCCDC; baita hiru silabako erroak ere.

Erro egitura baliatu zuen osagaien antzinatasunaz iritziak finkatzeko: bi silabakoetan antzinako atzizkiak eta aurrizki fosildu agortuak zekuskien. Bestalde, hizkuntzen arteko alderatze eta sailkatze genetikoak eratzeko, hitz erroak eta silaba egitura zerabiltzan. Sail bitxi bat zekusan, oinarriaren bi silabetan bokal bera duena, hitzetan nahiz aditz zenbaitetan ager daitekeena: Kalifornia eta Oregongo hizkuntzekiko paralelismo guztizkotzat jo eta aintzat hartu zuen Kaukasoko hizkuntzekiko erkaketan. Zioenez, oinarri disilabikoa euskal hiztegiaren estrato zaharra da. Uste zuenez, euskal lexikoiaren sakoneko izaeran eta esentzian barreneratzeko bide egokiena, behin eta berriz agertzen diren hitz bukaerak aztertzea da: *-tz* & *-ts, -ar, -er, -or, -ur, -el, -il, -an, -en, -in, -un…*

### *5.2.3. Beste gramatika batzuk*

Garrantzia eduki duten gramatika gehiago aipatzen ditugu, zerrenda gisa baizik ez bada ere. Campionek Bonaparteren eragina iltzaturik daraman *Gramática de los cuatro dialectos literarios de la lengua euskara* argitaratu zuen 1884an, lapurtera, zuberera, gipuzkera eta bizkaiera literarioak deskribatzen ditu. 1895ekoa da Jean Ithurri Sarako apezaren *Grammaire Basque* saio arauemailea, idazteko kodetzat har dezakeguna:

lapurtera idatzia deskribatzen du eta adibideak literatura klasikotik ateratzen; aditzari eskaini zion ia guztiz, izenaren morfologia eta sintaxia atalik meheenak dira. 1923-25ean Azkuek *Morfología vasca* klasikoa argitaratu zuen, Euskaltzaindiko bere kideek eskaturik, euskal hizki edo afijoen azterketa egin zuen lan honetan: bertan dago euskal eratorpen atzizkien lehen deskribapen eta azterketa sakona, hizkien sailkapen oso bat egin zuen. Lafitteren 1944ko *Grammaire basque navarro-labourdin littéraire* delakoa klasikoa da, bertatik luzaz edan du Ipar Euskal Herriko gizarteak, xeheki deskribatzen du Ipar Euskal Herriko euskara.

## 6. EUSKARAREN BATASUNERANTZ: EUSKALTZAINDIA (1918)[13]

### 6.1. Lehen urratsak

Hizkuntzaren corpus plangintzaren gaia anitz haizatu zen XIX. mende bukaeran eta XX.aren hasieran Euskal Herrian, baina hizkuntzaren garbitasuna eta erregulartasuna euskararentzat baldintza *sine qua non* ezarri zituen plangintzak ez zuen idazleen eta herri xehearen benetako mintzoarekiko uztardurarik ekarri, ez zuen arrakasta nabarmenik izan, nahiz idazle anitzek jarraitu zuten: jendeek nekez ulertzen zituzten Hegoaldeko idazle garbizaleen idazkiak, asmatu eta baliatu zen lexiko berri eta berexi hark ez zuen informazio maila handirik eskaintzen (ik. 8. atal honetako bereko §5.1.1 & 5.1.2).

Garai hartako idazle anitzek hitz bat aukeratzean ez zuten galdegiten ea hitzak tradizio literariorik duen, irakurleak ulertuko ote duen, ala zoko geografiko batean ala eskualde ttiki batean soilik erabiltzen den hitza den: garai hartako idazle anitzen kezka nagusia zen ea baliatzera zihoan hitza euskara ote den, euskaratikakoa. Egoera berexi hura zuzentzeko akademiaren beharra zegoen: euskarak une hartan premiazko zituen tresnak sortu, doitu edo gaitu beharra zegoen. Ordurako, XIX. mendeko hainbat idazlek adierazirik zuten hizkuntza babesteko akademia behar dela: Jose Pablo Ulibarri (1832), Jose Francisco Aizkibel (1856), Abbadia & Duvoisin (1862), Manterola (1880), Aristides de Artiñano (1886); (ik. 7. kap., §4.1.3). Euskal Pizkundearen barrenean, Oñatiko Eusko Ikaskuntzaren Batzarraren ingurunean sortu zen Euskaltzaindia 1918an, euskara goreneko kultura baliotzat hartu, indartu eta ikertzeko akademia ofiziala. Haren premia ezaguna zen:

1. hiztegi orokorra eratu eta normalizatu beharra zegoen

13. Zuazo (1988) da atal honen iturri nagusia, baina Camino (1988) eta Euskaltzaindiaren beraren web orria ere aintzat hartu ditugu.

2. ortografia batu bakar bat behar zuten mugaz bi alderdietako euskaldunek eta liburuen argitaletxeek
3. euskararen idazle eta erabiltzaileek osatzen zuten gizartean egokierarik ikusiz gero, euskara batu edo estandarra moldatzea ere gauza beharra zen

Hiru ildo horiek zaindu behar zituen sortu berri zen akademiak eta xx. mendeko lehen hamarkadetan, idazle, jakitun eta herritarren elkarte batzuek halako erakunde bat lehen baino lehen eratzeko eskatu zuten: *Euskal Esnalea* erakundeak, esaterako. Hizkuntzalari atzerritarrek (Bonaparte, van Eys, Hugo Schuchardt, Edward Spencer Dodgson, Gavel, etab.) eta euskaldunek (Azkue, Campion, Urkixo…) asmo hau agerturik zuten. Alderdi politiko foruzale eta abertzaleek erakundeetan indarra eduki zuten heinean eta jarlekuak zituzten guneetan, akademiaren aldeko giro instituzionala ere harrotzen hasi zen. Lehen ekimena Bizkaiko Foru Aldundian izan zen eta ondotik Hegoaldeko beste lurraldeetako hiru aldundiak inguratu ziren (1918). Azkue, Campion, Eleizalde eta Urkixo laukoteak abiatu zuen lana eta Azkue hautatu zuten euskaltzainburu. Geroztik kide gehiago harturik (Altube, Broussain, Juan Bautista Eguzkitza, Damaso Intza, Ramon Intzagarai, Lacombe, Landerretxe, Lhande, Olabide, Orixe, eta ohorezkotzat Schuchardt, Uhlenbeck eta Vinson) eta lehen arautegia onetsirik, Euskaltzaindia 1919ko urrian juridikoki eratu zen. Urtebete geroago akademiaren buletin ofiziala gertatu den *Euskera* agerkaria atera zen, erakundearen ikerlanak, agiriak eta arauak biltzen dituena. Helburu gehiago ere agertu zituzten hasierako garai hartan: hizkuntza-atlasa egitea edo literatura lehiaketak antolatzea.

Espainiako Gerra Zibila baino lehen, literaturarako euskara batu bat sortzeko asmoari lotu zitzaion Euskaltzaindia, baina ez zuen eginbidea lan ildo akademiko finko eta ziurretik eraman ahal izan (1922). Nolanahi ere den, garaiko lan batzuek arrakasta izan zuten; euskararen jakite-arloan, Azkueren irakaslanen ondorioz: *Morfología vasca* argitaratu zuen (1923-1934) eta hiztunei egindako inkesta zabalaren bidez *Erizkizundi Irukoitza* datu bilduma eratu zen (1922-1925). Azkue eta beste lankide gehiagoren artean egin ziren bildumak; lan hau euskal atlasaren hasikintzat ere jo liteke, baina atlasa izateko galdetegi urria zerabilen eta galderen norabidea ere ez zen atlas baten ohiko estandarra, Europako orduko hizkuntza-atlasak beste zerbait ziren; gerra denboran, gainera, atlasari herri batzuetan eman zitzaizkion erantzun-liburuxka batzuk galdu ziren, herri zenbaitetako erantzunak.

### 6.2. Garbitasuna vs. batasuna

Espainiako gerrak ez zuen gauza onik ekarri akademiarentzat, euskaltzain batzuek atzerrira ihesi joan behar izan zuten, eta akademiaren ohiko jarduna ilunbera kondenatu

zuen. Akademiaren isilarazitako jarduera Azkuek berrartu zuen. Xabier Kintanak 1995ean dioen bezala:

> Lainope beltz horretan, ordea, tenpluaren aldarean ñir-ñir ari den olio-lanparatxo dardartiaren antzera, Erribera kalean, zur iluneko egoitza tristean, gure hizkuntzak ere bazuen bere argia iluntasunean. Azkuek, bere jarrera apartidistari esker, ixilkako lana egiten segitu zuen bakean. Euskaltzaindia, legetik kanpoko egoera hartan, haren arrimuan toleratzen zen, iraute hutsezko bizitza motelaz bazen ere.
>
> Haren inguruan, pixkanaka, bertoko euskaltzaleak hasi ziren biltzen: Eusebio Erkiaga lekeitiarra, Federiko Krutwig getxotarra, Luis Villasante gernikarra, Bernardo Garro «Otxolua» mundakarra, eta Mikel Arruza eta Alfonso Irigoien bilbotarrak. Hauekin giro berria sortu zen. Euskaltzaindiak bere sorreratik izandako helburuetako bat, hizkuntzaren batasuna alegia, berriro plazaratu zen, Krutwig euskaltzainaren eraginez batik bat, lapurtera klasikoaren inguruan.

Azkue euskaltzainburuak garai hartan Federiko Krutwig-en laguntza eduki zuen betiko lanari berriz heltzeko: arautegia berritu zen (1954) eta euskaltzain oso berriak hautatu ziren. 1956tik aitzinera, Euskaltzaindiak bizitza erosoagoa izan zuen bere barne-zereginetan eta ageriko elkarretaratze eta biltzar irekietan: gerraondoko lehen biltzarra Arantzazun izan zen (1956). Hizkuntzaren garbitasunaz gehiago mintzatu zen biltzar hartan batasunaz baino, hizkuntzaren batasunaz idatzirikako txosten bakarra Txillardegi idazle donostiar gaztearena izan zen. 1958an EAJ-PNV alderdi politikoaren ingurumarian egosten zen hitz garbien aldeko joeraren aurka agertu ziren Bilboko bilkura batean Gabriel Aresti olerkari gaztea eta Mitxelena hizkuntzalaria.

1959an garrantzi handiko erabakia hartu zen akademian; euskal hitzak zein diren definitu zen, eta irizpideetan ez zen garbizaletasun mugagabea nagusitu: erabaki zenez, menderen mendeko tradizioaz herriak ahoz mintzatzean edo idaztean euskaraz baliatutako hitzek osatzen dute euskal lexikoa, gerra aitzinean Hegoaldean idazle zenbaitek —nahiz bere garaian Larramendik edo bestek— eratu zituzten hitz berriak gora-behera; hartara, *benedikatu, gorputz, pentsamendu* edo *seinale* erako hitzak nahiz *liturjia, metro, politika* edo *teknika* mailegu berriagoak ere ibil zitezkeen euskaraz idaztean[14].

Hurrengo hamarkadak indar eta lan-molde berriak ekarri zituen: Euskaltzaindira lankide-belaunaldi gaztea etorri zen eta gizartean euskara ikastolen bidez irakaskuntzan sartu zen. Euskarazko prentsaren indarberritzea ere gertatu zen, euskal hiztun ohikoen euskarazko alfabetatze mugimendua edo euskara ikasi zuten jende euskaldun berriak ahantzi gabe. Euskal liburu gehiago argitaratzen ere ari ziren euskaldunak eta aspaldian

14. Ik. «Euskaltzaindiaren agiria euskal itzei buruz», *Euskera* 4 (1959), 214-215.

sumatzen zen premia gorria denon begien aitzinean zen: eredu estandar bat behar zen, euskara batua nahi zuten euskara baliatzen zuten euskaldunek. 1959an Loramendi saria irabazi zuen Aresti gazteak *Maldan Behera* izeneko olerki sailaren bidez; esan ohi da hau dela egun ezagutzen dugun euskara batuan idatzirikako lehen liburua.

1960. urtea da, Euskaltzaindia Baxenabarreko Baigorrin bildurik dago, Jean Haritxelhar kidearen sarrera hitzaldia entzuteko prest. Jose Maria Lojendiok ematen dio hitza izangaiari, gipuzkeraz; Haritxelharrek baxenabartarrez egiten du hitzaldia eta berari erantzuna Lafon hizkuntzalariak ematen, zubereraz. Euskaltzainek erabiltzen zituzten grafietan ere ez zegoen batasunik: batzuek <ch> eta <tch>, beste batzuek <v>, beste batzuek <h>-rik ez… Anabasa hura ikusirik, euskaltzain urgazle zenbait haserretu ziren, batasunari jaramonik egiten ez zitzaiolako; Txillardegik dimisioa eman zuen eta besteri ere hala egiteko eskatu.

Akademiaren jokabidea begi onez ikusten ez zuen mugaz bi alderdietako gazteen sail bat Baionan biltzen hasi zen 1963an, *Euskal Idazkaritza* izeneko lantaldea eratu zen: Jesus Mari Bilbao, Jean-Louis Davant, Roger Idiart, Eneko Irigarai, Telesforo Monzon, Josu Solaun «Okotz», Txillardegi… Helburua euskara batua sortzea zuten eta proposamen guztiak Hegoaldera igortzen zituzten, Mitxelenari eta Euskaltzaindiari; harrez gero bidea lasterrago ibili zen. Garai hartako berri honela dakar Davantek:

> 1963ko udazkenetik 1964ko udaraino, euskaltzale batzu hilabetero bildu ginen horren inguruan, Kordelieren karrikako 14an, lehen solairuan, Euskal Idazkaritzak Enbataren aldamenean zeukan gelan, euskara batuari buruzko lehen urratsen finkatzeko. Hor elkarlanean genbiltzan hiru ETAko, bi EAJko (haietan Monzon), ni Enbatakoa, Roger Idiart irakaslea, azken bilkuretan beste hiru apez: Andiazabal, Hiriart-Urruty[15] eta Lafitte. Burutzeko, bilkura bat egin zen ber tokian, Baionako Biltzarra, 1964ko abuztuaren 29an eta 30ean, Lafitte gidari, mugaren bi aldeetako euskaltzale gazte andana batekin. Hor onartu ziren euskara batuari buruzko lehen neurriak: grafia eta deklinabidea bereziki. Ondotik Euskaltzaindiari proposatu genizkion, eta honen gehiengoak, 1968ko udan, Arantzazuko Biltzarrean beretu zituen, Koldo Mitxelenaren itzal handiari esker. Gero honek gure ibilbidea markatu zuen, baina beti aitortuz Txillardegiri zor geniona (*Plazaberri* aldizkaria, 2012/II/20).

Baionako Biltzarrera Lafittez landa, besteak beste, Patxi Altuna, Aresti edo Txillardegi bildu ziren eta Mitxelenak idatziz igorri zuen bere oniritzia. Proposamena Lafittek eta Piarres Lartzabalek egin zioten Euskaltzaindiari. *Jakin* aldizkariko kideek ere begi onez

15. Jean Hiriart-Urruti (1859-1915) idazle hazpandar handiaren senitartekoa dugu bigarren hau (1927-1990), hazpandarra ere; bigarren honen aitaren osaba zen lehena.

hartu zituzten erabakiok eta baliatzen hasi ziren. Une hartan batasunari bultzaka Jon Mirande eta Peillen zebiltzan Parisen, Kintana eta Aresti Bilbon eta ondotik Imanol Berriatua bermeotarra.

Euskaltzaindiaren 50 urteak ospatzeko bilkura batean, Arestik akademiaren zeregin nagusia zein den gogorarazi zuen Bilbon. Batasunaren premia ozen aldarrikatu zuen, ospakizunak alde batera utzi eta batasuna finkatzeko lanean hasteko garaia zela. Dei haren ondorioz, 1968an Arantzazuko bilkura orain ospetsua egin zen; bertan erditu zen denok orain ezagutzen dugun euskara batua (ortografia, hiztegia, izenaren morfologia); txosten nagusia Mitxelena hizkuntzalari handiak prestatu zuen. Gerora eta emeki-emeki, lanaren eta urteen bidez doitzen eta osatzen joan da eredu batu hau: aditzaren morfologia, sintaxia, toponimia, exonomastika, hiztegi tekniko eta berezituak, euskalkiek egun zein leku duten, hizkuntza-atlasa, literatura…

## 7. LEKUKOTASUNAK

### 7.1. Lekukotasun nagusienak

Gure aldia baino lehenxeagokoa da XIX. mendeko hirugarren laurdena, lekukotasun ezagun eta garrantzizkoetan aberatsa dena: 1851n Ipar Euskal Herrian abiatu ziren Lore Jokoetara aurkeztu ziren literaturako lanak eta Bonaparte printzeak hainbat eskualdetako apezei 60ko hamarkadan eskatutako katiximen itzulpenak lekukotasun ederra dira gure aldiaren aitzineko garaiko euskararen izaera ezagutzeko. Orain artean aurkeztu ez ditugun beste hainbat lekukotasun ere aipa daitezke: orduko euskal idazleen eta pentsalarien arteko gutunak; Campion → Bonaparte, Duvoisin → Bonaparte,[16] Etxenike → Bonaparte, Intxauspe → Bonaparte, Uriarte → Bonaparte. Ezagutzen ditugu Azkuek eta Arriandiagak edo Azkuek eta Broussainek elkarri idatziak ere, eta hemen lekurik ezaz zehaztuko ez ditugun beste hainbat eta hainbat gutuneria aipa liteke, esaterako Mitxelena eta Aresti, Nils M. Holmer edo Mirande artekoak, Jose Maria Satrustegi *Fontes Linguae Vasconum* aldizkarian argitara ematen aritu baitzen: garai hartako euskararen egoeraz eta izaeraz zein ikuspegi zegoen erakusten digute.

Zuzenean herriaren ahotik bildu euskararen laginak ere badira: Campionek *Orreaga* balada Nafarroa Garaiko hemezortzi herritako mintzora itzularazi zuen (1880); haur prodigoaren parabola euskaratu zuten Ipar Euskal Herriko zoko guztietako errientek Edouard Bourciez frantsesarentzat (1894), eta Julien Sacaze Hezkuntza Ministeritzako

16. Duvoisinen kasuan are interesgarriago da Jean-Baptiste Daranatzek 1928-1931 bitarte *RIEV*-en argitaratu gutun saila, Bonaparteri igorriez landa, Duvoisinek Campioni, Manterolari, Arrese-Beitiari edo Abbadiari bidaliak ere bai baitakartza.

kideak ere honelako zerbait egin zuen 1887an, Pirinioetako bi elezahar euskaratu-arazirik. Lehen grabazioak Rudolf Trebitsch austriarrak egin zituen (1913) Azkue eta Urkixoren laguntzarekin Vienako *Fonogrammarchiv*-erako. Ipar Euskal Herriko euskarari buruz Hermann Urtel-ek 1916-17an alemaniarren eskuetan atxiloturik zeuden euskaldunei bildu bandak aipa daitezke, Berlingo Fonoteka Zaharrean gordetzen direnak. Euskaltzaindiaren bitartez eta Azkue bultzatzaile nagusi zelarik, *Erizkizundi Irukoitza* izeneko hizkuntza inkesta bildu zen Euskal Herri guztian 1922-1925 bitartean.

Ikertzaileek herri euskararen laginak biltzea, Bonapartek ireki ildoari jarraikiz, ohikoa izan da gure aldian ere: Campionek 1881-83 bitartean Nafarroa Garaiko Burunda, Luzaide, Ultzama eta Zaraitzun; Charencey konteak zuberera dialektoaren fonetikaz (1891); Georges Lacombek Nafarroa Behereko Alduden (1911-14); Schuchardt-ek Lapurdiko Sarako euskaraz (1922) eta Jean Saroïhandik herri honetan berean 1924an; William Rollok Bizkaiko Markinako euskaraz (1925); Gerhard Bähr-ek Gipuzkoako 39 herritako aditza eta zehazki Legazpiko datuak (1925); Amado Alonso nafarrak Baztango txistukariez (1923) eta Tomás Navarro Tomás-ek Gernikako mintzoa (1923) nahiz Gipuzkoako azentuera (1925); Jean Larrasketek Zuberoako azentu eta kontsonante arteko eraginaz (1927) eta Barkoxe-Eskiulako mintzoaz (1932, 1939); Damaso Intzak Nafarroako aditz laguntzailea eta esaera zaharrak, baina baita Burundako mintzoa (1921-22) nahiz Larraungoa (1957) ere; Holmer suediarrak Bidasoaldea eta Gipuzkoako ekialdea batetik, eta Bizkaiko herri frankotako hizkuntza-ezaugarriak ere aztertu zituen emaztearekin lankidetzan (1950-1965); Kandido Izagirrek 60ko hamarkadan Nafarroako Erronkari, Ultzama, Altsasu eta Gipuzkoako Tolosa, Antzuola-Urretxu nahiz Oñati-Leintz inguruko datuak bildu zituen; Geneviève N'Diaye-k Baztango Amaiur eta Arizkungoak (1959); ez ditugu ahantziko Mitxelenak Erronkarin (1953), Zaraitzun (1958) edo Errenteria-Oreretan (1950, 1962) bildu lanabesak.

### 7.2. Idazleen belaunaldiak

Dakartzagun izen zerrendok ez dira sail oso eta zehaztzat hartu behar, ez dira garai hartako idazle guztiak ageri, sail nagusi bat dakargu, besterik ez. Esaterako, liburu idazleen zerrenda osoagoa da aldizkarietan idatzi zutenena edo bertsolariena baino, hau ez baita ikerketa lan zorrotz bat, garai hartako berri era aski zabalean eman nahi duen saiotzat hartu behar da gure hau.

#### *7.2.1. Lehen belaunaldia*

Adema «Zaldubi», Jose Ignazio Arana, Jean-Pierre Arbelbide, Arrese Beitia, Gregorio Arrue, Ramon Artola, Eusebio Maria Azkue, Serafin Baroja, Indalezio Bizkarrondo

«Bilintx», Campion, Laurent Diharasarri, Duvoisin, J.-B. Elizanburu, Mixel Elizanburu, Hiriart-Urruti, Intxauspe, Basilio Joanategi, Manterola, Klaudio Otaegi, Soroa, Pedro Migel Urruzuno, Alfonso Maria Zabala.

### *7.2.2. Ondoko belaunaldia*

Txomin Agirre, Joseba Mirena Agirre «Xabier Lizardi», Jean-Baptiste Althabe, Toribio Altzaga, Juan Arana «Loramendi», Emeterio Arrese, Pepe Artola, Azkue, Barbier, Abelino Barriola, Ebaristo Bustintza «Kirikiño», Jean-Baptiste Constantin, Katalina Eleizegi, Jean Elizalde «Zerbitzari», Jose Manuel Etxeita, Etxepare Bidegorri, Bitor Garitaonandia, Federiko Garralda, Biktoriano Iraola, Pablo Fermin Irigarai «Larreko», Jauregi «Jautarkol», Etienne Lapeire, Lhande, Leon Leon, Frantzisko Lopez Alen, Moulier «Oxobi», Gregorio Mujika, Robustiana «Tene» Mujika, Nikolas Ormaetxea «Orixe», Estepan Urkiaga «Lauaxeta», Paulo Zamarripa, Enrike Zubiri «Manezaundi».

### *7.2.3. Hondarreko belaunaldia*

Jose Agerre «Gurbindo», Toma Agirre «Barrensoro», Augustin Anabitarte, Balendin Aurre-Apraiz, Julene Azpeitia, Alejandro Bilbao «Erramun Maruri», Errose Bustintza, Xabier Diharze «Iratzeder», Jose Eizagirre, Eusebio Erkiaga, Joxe Manuel Estonba, Jean Etxepare Landerretxe, Jose Maria Etxaburu «Kamiñazpi», Nemesio Etxaniz, Bernardo Maria Garro «Otxolua», Juan Inazio Goikoetxea «Gaztelu», Andima Ibiñagabeitia, Jon Andoni Irazusta, Mariano Izeta, Antonio Maria Labaien, Lafitte, Lartzabal, Manuel Lekuona, Mirande, Salbatore Mitxelena, Telesforo Monzon, Migel Olasagarre «Damaso Intza», Basilio Pujana, Sagarzazu «Satarka», Etienne Salaberri, Sebastian Salaberria, Alejandro Tapia-Perurena, Jokin Zaitegi, Agustin Zarrantz «Polikarpo Iraizozkoa», Augustin Zubikarai.

## 7.3. Bertsolariak

Ferranddo Aire «Xalbador», Juan Jose Alkain «Udarregi», Andres Astiz, Pierre Bordazaharre «Etxahun», Euxebio Eizmendi «Txapel», Inazio Eizmendi «Basarri», Pedro Jose Elizegi «Pello Errota», Kepa Enbeita «Urretxindorra», Balendin Enbeita, Manex Etxamendi, Fermin Imaz, Akilino Izagirre «Zepai», Joxe Miel Iztueta «Lazkao Txiki», Jose Manuel Lujanbio «Txirrita», Jose Mendiage, Manuel Olaizola «Uztapide», Pedro Mari Otaño, Frantzisko Petrirena «Xenpelar», Mattin Treku, Joan Inazio Uranga, Jose Joakin Urbieta «Kaskazuri», Joxe Zapirain, Juan Krutz Zapirain.

## 8. LEKUKOTASUNEN HIZKUNTZA-AZTERKETA

Aldi honetako euskara ez da sakon aztertu; alderdi grafikoa salbu, ia ez dago lanik garai honetan euskaran gertatu diren aldaketa eta bilakabideez diharduenik: esaterako, sintaxian 1876-1968 bitarte euskaran gertatu diren aldaketen berri jakiteko ia ez dago nora jo, horregatik, hango eta hemengo ezaugarri batzuen aldaketez berri batzuk dakartzagu hona, baina osotasun eta sakontasun asmorik gabe, ikerketa lan berezituagoak beharko dira horretarako. Bestalde, dakartzagun datuak beti dira geografia ukitu edo kutsua dakartenak: Ipar Euskal Herriko nahiz Euskal Herriko erdialdeko eta mendebaleko bilakabideak aurkeztuko ditugu, zail da oraingoz euskara guztiari dagozkion aldi honetako aldaketak aurkeztea.

### 8.1. Alderdi grafikoa[17]

Aurkezten dihardugun aldi honen barrenean gertatu zen euskal grafiaren normalizazioa, XX. mendean, baina aitzindariak lehenagokoak dira, corpus plangintzari XIX. mendearen lehen erdian ekin zitzaion, bereziki Ipar Euskal Herrian (ik. 7. kap., §4.1.3). XIX. mendean <gue>, <gui> → <ge>, <gi>, nahiz <que>, <qui> → <ke>, <ki>, eta igurzkari bizkarkariari dagokionez, <ça>, <ço>, <çu> → <za>, <zo>, <zu> bidea ibili zen eta bestalde, txistukari afrikatu apikarirako <ts> baliatzera jo zen. Hegoaldean, berriz, Aizkibelen lana da aipagarri, Euskal Herri osorako balioko zuen eredu bat aldarrikatu baitzuen; ortografia erraztea eta arrazoizkoago bihurtzea da haren *Gramática analítica de la lengua vascongada* eskuizkribuaren xedea.

Orduko idazleen proposamen haietarik guztietarik bizpahiru ideia nagusi aipa daitezke:

a. exonormatibismoa gaitzestea eta ondorioz, euskal hiztun elkarte osoarentzat balioko duen ortografia sistema bakarra hobestea
b. euskarazko letren eta hotsen arteko biunibokotasuna lege-arau bihurtzea[18]

1850 inguruan ortografiako eztabaiden lekua funtsean Iparraldean zegoen: Bonaparte, Duvoisin, Hiribarren, Intxauspe, Xaho… Guztiek ez zuten iritzi bera: eman dezagun, beste hainbat apez bezala Intxauspe sistema zahar frantsesaren alde zegoen, baina berriaren alde jokatu zuen Duvoisinek; sistema berriak indarra hartu zuela erakusten

17. Gaiaren berri bikain dakar Zalbidek (2003); saihestu ezina da, halaber, Zuazoren lana (1988).

18. Azkuek ere hala nahi zuen, Port Royal-eko 1660eko gramatikaren ildotik datorren ideiaren aldezle zen, hau da, hots orok bere letra ukan behar du eta irakurtzen den bezala ahoskatu behar da; letra bati hots bakarra dagokio (Zalbide 2003: 22).

digu Bonaparteren bitartez Intxauspek berak Londresen 1858an argitaratu *Jaundone Juhane* apostoluaren apokalipsian baliatu zen sistemak; grafia berria zen osoki, ez zen bi urte lehenago hark Baionan argitaratu *Sen Mathiuren* ebanjeliokoa bezalakoa. Gerora, 1890erako bide berritzea abiaturik zegoen, 1880ko Hegoaldeko irakinaldia barne: Abbadiaren kantu paperak edo Mauleko Jean-Dominique-Julien Salaberri notariaren 1870eko liburuko kantuak ez dira atzentzekoak. Duvoisinen garrantzia aipagarri da grafiaren alorrean, bide-erakusle izan baitzen; esate batera, Hiriart-Urrutik 1858ko haren *Laborantza liburua*-ko grafia eta zainketa maite zituen; grafia berria *Eskualduna*-ra ere eraman zen. Duvoisinen grafia sistema egungo euskararena bera da, <x> eta <tx> baizik ez ditu falta, Ipar Euskal Herriko ohiko <ch> eta <tch> dakartza hark.

Patxi Altunak 1986an erakutsi bezala, Duvoisin *Eskualduna*-ko estilo zuzentzaile izan zen eta baita Abbadiaren jokaldietako sariketetan ere. 1900erako gaia bideratuxe zegoen, 90eko hamarkadan babes handia jaso zuen grafia berriak *Eskualduna* kazetan. 1850eko eta 1890eko egoerak ez ziren inola ere berdinak, Ipar Euskal Herriko corpus plangintzak emaitzak zekartzan: *guiçonec* idaztetik *gizonek* aldaera idaztera mende erdi horretan joan zen eta zenbait idazle zahartzalek zioten bezala, euskara *kakaz bete*. Garai hartarako, *mutico / mutiko, oquer / oker, cerbait / zerbait* auzietan iritzi gehienak bateraturik zeuden. Uler daitekeenez, idazle guztiak ez ziren horren malguak: Soroa donostiarra ez zen *k* letraren zalea eta Azkueri igorri *Gabon* antzerkiaren eskaintzan *egilleac* dakar, *k* gabe; 1902an hil zen Soroa.

Hegoaldera ere iragan zen grafia sistemaren auzia. Egitasmo politiko abertzalearen ardatz jakin baten inguruan zekusan hizkuntza plangintza Aranak. Haren ustez, corpus plangintza baitezpada estatus plangintza bati estekaturik zihoan. Azkuek, berriz, euskal idazleek akademia sortzea nahi zuen eta akademiarik ez balitz ere, bi alderdietako idazle euskaltzaleek ortografia bat adostu zezaten. 1905-06an argitaratu zuen euskal hiztegia eratzen ari zen Azkue garai hartan eta ortografiarik gabe ez zezakeen hiztegi hura antola; batasuna lortzeko bidean, Azkuek garbi zuen Iparrean zituen adiskideen laguntza ere baliatu beharko zuela, Zaldubi eta Broussainena. Jakina denez, Azkueren eta Aranaren idazteko arauak ez ziren berdinak. Lekeitiarrak 1896an *Proyecto de ortografía* kaleratu zuen Bilbon eta urte hartako bereko irailean etorri zen Aranaren *Lecciones*, 300 orrialdekoa. Esaterako, txistukari sabaiaurrekoak adierazteko lekeitiarrak <s̄> igurzkaria eta <ts̄> afrikatua baliatzen zituen eta honelaxe jokatu zuen hiztegian ere; Aranak, berriz, <x> eta <tx> nahi zituen. Bestalde, dardarkaria idazteko Aranak <ŕ> proposatzen zuen, gaztelaniaz bestela egiteko joranak baitzerabilen abandotarra.

xx. mendearen hasieran Donibane-Lohizuneko Martin Guilbeau sendagileak ortografia arautzeko biltzarra antolatu zuen Hendaian (1901); hurranen urtean berriz bildu ziren, Hondarribian (1902): Ipar eta Hegoko euskal idazleek idazkera bateratzea

zen helburua, baina ez zen arrakasta handirik izan. Garai hartan ere, gazteak izan ziren eztabaidetan aitzindari: Duvoisin eta Ithurri hil berriak ziren, Bonaparte (1891) eta Abbadia (1897) hilik, Intxauspe zaharturik zegoen eta van Eys eri; Campion, berriz, bere onenak emanik. Hasieratik giro epela sumatu zen: ekainean Guilbeauk egin proposamenaren aitzinean, Azkuek ez zuen Hendaiako saiora agertzeko asmo handirik eta idazle ipartarrek ere ez zuten joateko borondaterik agertu. Ordea, Arana biltzarrera joatekoa zela eta ortografia arautzeko egitasmo bat zekarrela jakin orduko, lekeitiarra berehala lotu zitzaion lanari; batzuek eta besteek bultzatu nahiko zuketen hizkuntza plangintzaren bideragarritasuna da Hendaian jokoan zegoena.

Ipar Euskal Herriko apez zenbaitek eta idazle giputzek —donostiarrak barne— ez zuten interes berezirik Azkue eta Arana bizkaitarrek zerabilten auzian. Baxenabarretik eta Zuberoatik ere ez zen ia inor joan, hiru baxenabartar eta zuberotar bakar bat, joan ziren gehienak lapurtarrak izan ziren, bederatzi bat gutienez bai; izan ere, zeukaten ereduarekin aski ongi moldatzen ziren: eredu nafar-lapurtarra, Larresoroko semenarioan, Baionako kalonje-taldean edo *Eskualduna*-n erabiltzen zuten. Donostiarrek ere bazuten beren ortografia, Manterolak *Euskal-Erria*-n moldatua, Iparraldekoei kopiaturik; kopiatu ez zituzten tradizio frantseseko grafiak gaztelaniaren ordainen bidez egokitu zituzten: egungoa bezalako euskal grafia zerabilten, <s̃> «x» eta <ch> «tx» izan ezik. Orduko Donostia euskarak aski indar zuen hiriburua zen, baina garai hartako euskalgintzaren eztabaida funtsezkoenak Bilboko *Centro Vasco*-an gertatzen ari ziren.

Muga ondoko 1901 eta 1902ko biltzar haietan ortografia batzeko izan zen porrotaren errua Aranari leporatu bazaio ere, ez da atzentzekoa arrazoi pertsonalak ere izan zirela tartean: Azkuek, Aranak eta Hiriart-Urrutik botere handia zuten eta aldezleak aise inguratzen zitzaizkien; haien aurkako proposamenak egitea eta garaile ateratzea ez zuen erraza izan behar. Gauza jakina denez, bilkura haietarik ez zen ortografia bateraturik atera. Ondotik, Baionan 1911n eratu zen *Cercle d'Études Euskariennes* erakundeak ere ortografia bateratu nahian jardun zuen Ipar Euskal Herrian, baina Europako gerra hastearekin eten zuen ibilia: Urkixo, Lacombe, Gavel, Broussain, J.-B. eta Albert Constantin, Daranatz, Nicolas d'Arcangues, Alexis Durisburu, Etxepare Bidegorri, Landerretxe eta Albert Léon ziren partaide. Idazteko arauak erabaki eta bateratu zirenean, Ipar Euskal Herrikoen eskarmentua garrantzizkoa izan zen, Gavel batena, esaterako.

Zernahi ere den, garai hartako auzigai gogorrenak ez dira horrenbeste: *gashotu* / *gachotu* / *gas̃otu* / *gaixotu* / *gaxotu* idatzi behar ote den eta baita afrikatuaren auzia ere: <tch> / <ch> / <c> / <ts̃> /<tx>. Dardarkariarena ere finkatu gabe zegoen: <ŕ> / <rr>. Guilbeauk zioen legez, bazen oraino beste auzi bat gehiago, ortografiak ea sandhiak eta eufoniak islatu behar ote dituen: *ez daki* ala *eztaki* idatzi behar den; *ogia* / *ogie* / *ogiya* / *ogixa* / *ogixe* / *ogidxe* / *ogii* idatzi behar ote den; eufoniak ez idaztea dirudi zela

idazle gehienen hautua, baina Arana eufoniazale baitzen eta garai hartan haren iritziak aldezle ugari izaki! Mehatxatzera ere iritsi zen: haren sistema onartzen ez baldin bazen, bizkaitarrek beren gisako grafia baliatuko zutela zioen, gainerateko euskaldunez kezkatu gabe. Egia esan, aranazaleek Hegoaldean <x>, <tx> eta <ŕ> grafiak nagusitzea lortu zuten: errokatuz zihoan Aranaren grafia. Ordea, Aranaren sistema busti-palatal eta eufoniazalea ez zen nagusitu, ez 1919an Euskaltzaindian ezta gero ere; aranazaleen arteko gogaide bat bada, eufonien idazkera hau alde batera uzteko prest egon zena: Eleizalde euskaltzaina.

Uste izatekoa den legez, Euskaltzaindia sortu orduko, ortografia sistema bat finkatzeari ekin zitzaion lehenik eta hautatu zen sisteman nabarmena da Aranak bultzaturikako eredua. 1920/I/8an bozketa egin zen eta honako sistema arautu zen: *a, e, i, o, u* eta *ü* bokalak; kontsonanteetan, berriz, honakoak onetsi ziren: *d, d̃, f, g, h, j, k, l, l̄, m, n, ñ, p, r, ŕ, s, x, t, t̄, ts, tx, tz* eta *z.* Gizartearen egitura nahiz izaeragatik eta nortasun nahiz ohitura arrazoiengatik, Euskaltzaindiaren sistema ortografikoak sarrera motelagoa izan zuen Ipar Euskal Herrian. Egun ere, jendeen deiturak ematean ohitura sendoa dago <c>, <ç>, <ch>, <tch> idazteko.

## 8.2. Alderdi fonikoa

***8.2.1.*** Bonaparteren garaiaz aski argibide zehatzak ditugu euskal alderdi fonikoaz. Ondoko garairako, gure aldirako, Larrasket apez eskiularrak Zuberoako Barkoxeko Larraja auzoan egin zuen fonetikako azterketa xehea balia dezakegu erakusgarri (1932). Euskalki horretan orduan ere fonema ugari zegoen Hegoaldean baliatzen ez zenik; bokaletan ohiko *a, e, i, o* eta *u* baliatzen zituzten, baina baita Hegoaldean baliatzen ez den *ü* palatala ere, ondoko Amikuzen ere ezaguna zena eta gerora frantses maileguen bidez Baxenabarre eta Lapurdiko ahozko euskarara ere etorri dena. Sei bokalok, bestalde, beren aldaera sudurkaria zuten orduko Zuberoan. Kontsonanteetan *rr* dardarkaria ongi gordetzen zen Barkoxeko Larraja auzoan *ártho, ardú, értzo, érdi, érbi* erako hitzetan, baina beste ingurune batzuetan dardar bat edo bi baizik ez zen sumatzen: *xeria* 'xerria' eta *horát* 'horrat' dakartza Larrasketek eta *arapostia* eta *araoutzia* 'arrautza' 1888ko *Ziberouko egunaria*-k; 1929ko *Gure Herria*-n *eregiña* & *erregiña* datoz. Bestalde, Larraja auzoan ez zegoen «r» edo ttapik bokalen artean: *hoi* 'hori', *Paise* 'Paris', *haxéia* 'axeria'.

Oro har, bokalarteko *r* galtzea XIX. mendearen erdialdetik honat gertatu da Zuberoan, guztiak galtzeraino, gainera. Lapurdin, Baxenabarren eta Zuberoan bokalarteko *r* anitzen ordain *h* ageri da, inoiz *rh* > *h* soiltzetzat ere interpreta litekeena: *behotu* 'berotu', *ihetsi* 'irentsi', *ohia* 'orea', *zihikota* 'zirikota' ditugu Baxenabarren. Zuberoan baizik ez da bokalarteko *r* osoki galdu; gainerateko euskalkietan galtzea joera da, baina ez da Zuberoan legez osoki gauzatu. Peillenek dio ezagutu dituela hitz guti batzuetan

bokalarteko *r* ahoskatzen zuten hondarreko zuberotarrak Santa Grazin. Hona adibide batzuk Trebitsch-ek Maulen 1913an 30 urteko gizon bati harturik: *beant* 'berant', *behala* 'berehala', *deio* 'dereio', *eamanik* 'eramanik', *etxeat* 'etxerat', *ixtoiak* 'istorioak', *mezi* 'merezi', *zankoik* 'zankorik', *zuekin* 'zurekin'. Hiztun beraren beste adibideotan bokalarteko ttap bere lekuan ageri da: *ari, behinere, dira, emaztiari, erretiro, oro, zure*. Zuberoako herrietako euskara orokorrarekin alderatuz gero, Santa Grazik zenbait bilakabidetan gordetzaile jokatu zuen: *hüskara* hitzak *h* zeraman, *juan* gorde zen, *jun-era* heldu gabe, *ere* egin ohi zen eta ez *ee*, *erhi* eta ez *ehi*. Intxauspek 1858an zerabiltzan *déyot* 'diot' & *déyozü* 'diozu' edo J.-B. Constantinek 1910ean zerabilen *deio* erakoak entzuten zizkien Santa Grazin Peillenek xx. mendearen lehen erdian hiztun zaharrei, baina ondotik, *diot* & *diozü* era laburtuak nagusitu ziren, lasterrago mintzatzean *dot* & *dozü* egin ohi zirenak.

Kontsonante albokarietan *l* eta *ll* dakartza Larrasketek orduko Larrajan; esaterako, *halla* 'haurtxoa' zen haurren mintzoan. Igurzkarietan *b, d* eta *g* dakartza eta lagunarteko mintzo jarrai eta oharkabean, *bh, dh* eta *gh* ere entzun zitezkeen, *ph, th* eta *kh*-ren ahoskatze igurzkarian, *abhéz* «aphez», *ádhe* «athe» eta *ügha* «ukha» hitzetan. Gerora, Jean-Baptiste Coyosek *bh* baizik ez du entzun Arbailan, «bai» hitzean, hanpadura adierazgarriaren bidez ahoskaturik denean. Bestalde *f* ezpain-horzkaria zegoen Barkoxeko Larrajan igurzkarietan, frantsesekoak bezalako soinua zuena. Txistukarietan *s* eta *z*, baina bakoitzak bere aldaera ahostuna zuelarik; sabaiaurrekoan *x* eta haren kide ahostuna, hitz hasieretan ezaguna den [ʒ]: *jar, jente, jin*… Baita *h* ere, bokalen aitzinean ahoskabe eta bi bokal berdinen artean ahostun zena. Herskarietan *b, p, d, dd, t, tt, g, k, ph, th* eta *kh* dakartza. Sudurkarietan, *m, n* eta *ñ* eta afrikarietan *ts, tz* eta *tx*.

***8.2.2.*** Beste alderdirako, Bizkairako, hurranen belaunaldiko datuak aipa daitezke, Holmer-ek eta Vania Abrahamson-ek Bermeo aldean 1958-1965 artean bildu zituztenak (1968). Bokaletan ohiko *a, e, i, o* eta *u* bildu zituzten; kontsonanteetan *b, d, g, p, t, k, f, l, m, n, r, rr;* txistukarietan *s* bildu zuten, gaztelaniazko *s* eta *z* artean sumatzen zutena. Txistukari afrikatu baten berri ere eman zuten eta *n* ondotik *ts* eta *tz* entzun daitezkeela zioten. *j* aipatzean gaztelaniazko *y*-ren hotsa etorri zitzaien gogora, baina badakigu Bermeo aldean txistukarirantz jotzen duela. Sabaikarietan, berriz, *x, tx, dd, tt, ll* eta *ñ* bildu zituzten. Mendebaleko zenbait herritan (Bermeo, Elantxobe, Eibar), *tt* > *tx* gertatu zela ezaguna da: Azkuek 1919an zioenez, Lekeitioko arrantzaleen auzoan haurrek *aitxa* 'aita' ahoskatzen zuten.

Bestalde, bokal goren eraginez sortu palatalizazioa dugu, 1800eko eta 1925eko Markinako adibideak alderatzean ageri dena: *neskía* > *neskíe, etxía* > *etxíe, basua* > *basue, mendidxa* > *mendixe, buruba* > *burue* gertatu zen. Ondotik, baina ez dakigu zehazki noiz,

laburtzapenak etorri dira: *neskí, etxí, basú, mendixe, burú.* Horrez gain, berranalisiak aldaera mugagabean *búro* 'buru' eragin du Markinan.

***8.2.3.*** Adstratu egoeran dauden hizkuntzen artean elkarreragina gertatu ohi da eta honela izan da euskararen eta erdaren artean ere. Izan dira erdal hotsak euskal fonemen inventariumera egokitu direnak, euskal egituran aurkitzen zuten hots idurienera jo dutenak; baina izan dira euskal sisteman lekua egin duten hots arrotzak ere, gerora euskaraz fonema bihurtu direnak. Fonema bihurtzeko bidean, hots berriak mailegu anitzetan eta kokagune foniko ahalik eta ugarienetan agertzea izaten da baldintza. XIX. mendearen bukaeran eta XX. mendearen hasieran sortu ziren Ipar Euskal Herriko hiztunek euskal fonema idurienei egokitzen zizkieten frantseseko hainbat fonema; gure aldiko hiztun ipartarrengan, guk ezagutu ditugunengan bederen, ez ziren ohikoak XXI. mendearen hasierako lekuko ipartar batzuen euskaran ageri diren frantses fonema guti batzuk; artean beste euskal fonema batzuen bidez egokitzen ziren, baina egungo euskal mintzoan frantseseko era gordinean ageri dira. Irantzu Epeldek Donibane Lohizunen 2007an bildu dituen adibideetako egokitzapenak berriskoak dira Ipar Euskal Herriko euskaran: mailegu ugariren eraginez bokaletan *ü* palatala txertatu da, eta kontsonanteetan [v] ezpain-horzkaria, [ʒ] txistukari sabaiaurrekoa eta [z] ahostuna, hondarreko hau *müze* 'erakustokia', *kuziniera* 'sukaldaria', *gaza* 'gasa', *prezüra* 'gatzagia', *kazerna* 'kuartela' maileguetan. Lehenago ere Ipar Euskal Herriko hainbat hiztunengan —baina ez zaharrenen artean edo zuberotarretan— entzuten zen [R] ubularea ere aipagarri da.

## 8.3. Alderdi morfosintaktikoa

### *IPAR EUSKAL HERRIAN*

***8.3.1.*** Lapurdiko izenordaintzat hartzen du *Orotariko Euskal Hiztegia*-k *haina* anaforikoa, 'halakoa' adiera edo duena, Leizarragarengandik honat Lapurdin erabiltzaileak izan dituena. Oro har, badirudi XIX. mende bukaeran eta XX.aren hasieran eman zuela azken hatsa. Nafarroa Behereko idazki zaharretan ez da ageri, baina XIX. mendean sortu bi erabiltzaile baditugu, sortzez baxenabartarrak, nahiz herrialde honetakoa baino mintzo zabalagoa zerabilten: Arbelbide Zarokoa eta Oxobi Bidarraikoa. Hona Arbelbideren adibide bat: *Nork ere maiz hartzen baitu bazka saindu eta erremedio salbagarri hori debozionerekin, eta hainak hartarainokoan borthitzen du bere arimako osasuna eta bizia…* in *Igandea edo Jaunaren eguna* (1895: 113).

***8.3.2.*** Zenbatzaile eta determinatzaile ez zehaztua den *bat* ez da lekuzko kasuetan berdin jokatzen Euskal Herri guztian. Ipar Euskal Herriko ekialdean eta erdigunean,

Uztaritzeraino, *batetan, batetarik, batetara(t)…* izan da ohitura zaharra, nahiz honelakoetan *-ta-* sartzea berrikuntza dela dirudien. Baxenabarren XIX. mendean *-ta-* duten eta ez duten aldaerak ditugu idazkietan eta XX. mendean bi erak baliatu dira ahozko mintzoan; esaterako, 1913an *elge batetaik* dakar Amikuzeko Amorotzeko hiztun batek. Ordea, egun Lapurdi-Baxenabarretan *batean, batetik* aldaerak nagusitu dira. Zuberoan *-ta-*dunek iraun dute, Erronkariko Uztarrozen bezala.

***8.3.3.*** Aditzondo konposatuak «nahi»-rekin eratzen direnean, «nahi»-ren ezkerrean dagoen izenordainak hartzen du kasu atzizkia euskara zaharrean Ipar Euskal Herriko eskualde ugaritan, baina XVIII. mendearen bukaeran aldaketaren zantzu zenbait ageri da. Leizarragak *norequin nahi* eta Lopezek *nolaco nahi* (1782) darabiltzate. Aldaketa hasia da XVIII. mendearen bukaeran, Le Quien de Laneufville Akizeko apezpikuak berrinprimarazi katiximan *Nor nahic bathea dezakea?* baitator, baina XIX. mendean Bonapartek Baxenabarren eginarazi itzulpenetan hiru era ditugu. Baigorriko Iribarnegarairen itzulpenean *nor nahic* dator, baina Donamartiriko katiximan *nok nahi* eta Donapaleukoan *noknahik*. XX. mendearen hasieran atzizkia izenordainari atxikitzeak hala dirau; hona Barbierren 1924ko ablatiboko adibidea: *nondik nahi ager ditezen miruak*. Lapurdiko Larresoron ahozko mintzoan *nuntinaitik* erako pleonasmoak entzuten dira oraino. Zuberoan ohitura zaharra zuten: J.-B. Constantinek *nuri nahi* zekarren 1926an.

***8.3.4.*** Testu zaharren arteko hiatoek hizkuntza bilakabideen historia arakatzeko xendrak lanbroz betetzen dituzte eta ez dakigu testu batean hizkuntza-ezaugarri bat ez agertzeak zer adierazten duen; berrikuntza hori ez zela ordura arte testua idatzi zen eskualdean gertatu, ala besterik gabe, eskualdean ordurako garaturik zegoen ezaugarri bat gure testuan halabeharrez edo txiripaz ez dela ageri. Idazki zaharretan ez da ageri, baina gure aldian Zuberoan *-k* dakar *-xe* atzizkiak: *hortxek, hantxek* aldaerak baliatzen dira Basabürü eta Pettarrean, beharbada berranalisi zenbaitez sorturik. Erronkarin, Zaraitzun, Amikuzen eta Baxenabarre gehienean *-xet* egiten dute *holaxet, hementxet* & *heentxet, hortxet* erako adizlagun indartuetan, baina XIX. mendeko katiximak arte ez da ezaugarria Baxenabarreko idazkietan ageri. Aldiz, idazki gehiago duen Lapurdiko literaturan lehenago ageri da: *hemenchet* dakar Xuriok *Imitazionea*-n (1720: 38).

***8.3.5.*** Badirudi oraineko adizkien analogiaz edo, iraganeko *-za-* erroa galdu dela "izan" aditzaren Nor Nori jokoetan. Gure aldian joera hau Hazparnealdean nola Baxenabarreko Amikuze ibarrean ageri da; lehenago, eskualdeko idazleetan, XVIII. mendean Lopezek eta Le Quien de Laneufville Akizeko apezpikuak eginarazi katiximak *zitzakon* dakarte eta *zitzayon* dakar *Kadet eta Bettiriño* Hazparneko XVIII. mendearen erdialdeko idazlanak

ere. Bonapartek *zitzatan* bildu zuen Bithiriñako Casenaverengandik, baina Bonapartek Donapaleun itzularazi katiximan *zautan* 'zitzaidan' eta *zaukun* 'zitzaigun' ageri dira. Eskualde horretan *hil zatan* 'hil zitzaidan' bildu zen 1913an Amorotzen eta *zatan, zakon, zaukun* saila bildu da Amikuzen XX. mende bukaeran. Iduri luke gure aldian guztiz nagusitu dela joera hau.

### *EUSKAL HERRIKO ERDIALDEAN*

***8.3.6.*** Galduz joan da gure aldian gaindi beroriketa Hego Euskal Herrian; Donostiako adibideok Soroarenak dira, 1886koak: *bai al dijua? / ez al du eraman biar baserriko kutsurik? / nik eskerrikasko esan biarrian beorrek esatia / baita beorri ere / bijua ondocho / ez beiyela emen aizetan egon.* Honelakoak entzun zitezkeen XX. mendearen bigarren erdian, esate batera Donostian berean, baina gure aldiaren bukaerako belaunaldiko jendeek ez dute mintzaeran beroriketaren jarraipenik egin.

***8.3.7.*** Galduz joan da instrumentaleko *-(t)zaz* aldaera Donostialdean gure aldian; XVIII. mendeko Jose Vicente Etxagarairen *zubetzaz aztubak,* Bilintxen *itzazu nitzaz kupira,* Soroaren *nitzas* edo Imaz bertsolariaren *ayetzaz* & *orretzaz* erakoak bizirik ziren XX. mendearen bigarren erdian hiztun donostiarren ahoetan, baina geroztik, gure aldiaren azken garaian sortu jendeen belaunaldian *-az* & *-taz* nagusitu da.

***8.3.8.*** Gure aldian laburtu dira Nor Nork saileko iraganeko **edun*-en adizkiak Donostialdean. Bonaparteren garaiko *nuen, zenduen, zuen, genduen* aldaerak, edo Soroaren 1886ko *genduela*, berriz, *nun, zendun, zun, gendun* ziren XX. mendeko lehen urteetan sortu donostiarren mintzoan; Hernanin eta Lasarten *nuun* bildu zen *Erizkizundi*-an eta Azkuek Igeldon *zuun*, baina Bähr-ek *nun* dakar Hernanin mendearen hasieran.

### *EUSKAL HERRIKO MENDEBALEAN*

***8.3.9.*** Datiboko adizkien higadura eta oraineko formetan oinarritu aldaketa analogikoa gertatu zen mendebalean: *neutzun* 'nizun' > *netzun* > *tzuten*. Honela, iraganeko adizkietako ergatiboaren lekualdaketa galdu zen; adibidez, *seuntzon* > *dotzasun* 'zenion' edo *geuntzon* > *dotzagun* 'genion' ageri zitzaigun Bermeon. Joera hau Mundakan, Busturian, Elantxoben, Natxitun, Bakion edo Lekeition ere gertatu zen.

## 8.4. Alderdi lexikoa

XIX. mende bukaerako eta XX.aren erdialdea arteko joera garbizaleez 5.1.2. azpiatalean mintzatu gara. Aski da orduko euskal idazle edo euskaltzaleen kexuez ohartzea, Euskal

Herrian erdal maileguek ahozko euskaran zuten sarrera zenbatekoa zen jabetzeko. Hiriart-Urruti mindurik ageri zaigu 1896an, ohiko euskal hitzak beharrean, premiarik gabeko hainbat mailegu entzuten zela euskaldunen ahotik, *beti edo ardura frantximant hitzak dariozkate;* adibideak herronkan dakartza:

*Nola ekartzen zira? / Nola zira?*
*Gure granerak enormiak dire / Gure granerak edo soilaruak, edo selauruak anitz handiak, gaitzak handiak dire edo Gure bihitegiak, belartegiak ezin handiagoak dire*
*Drole da; nire haurra* cependant *orai arte beti* assidu *izan da eskolarat*
*Jaun hunek* introduisatuko *gaitu barnerat / sartzea, sarraraztea*
*Bonjour; bonsoir; Monsieur le curé / agur; bai zuri ere; Jainkoak dizuela egun on, gau on!*
*parlatzen, erresponsabilitatea*
*clotura / hesi edo harrasi; bordura / alor bazter*
*promes, disposizione / ezkontzeko xedetan direla, elgarri hitzemanak direla*
*Meza bat Monsieur eta Madame edo Mademoiselle holakoaren partez / meza bat holako etxeko-nausiaren edo etxekoandrearen izenean*

Zuberoako Larrainen 1884an sortu lekuko batek honako maileguak baliatu zituen Urteli 1916an ipuin bat kontatzean: *arrakontratü* 'buruz buru egin', *atzeta* 'onets', *konfüs* 'zalantzati', *genatzen* 'gogaitzen', *blesatü* 'zauritu', *ofentsatü* 'samindu, iraindu', *pünitü* 'zigortu', *okasionea* 'aukera', *afrontü egiten* 'iraintzen', *thürmentiak* 'oinazeak'. Ez dira, noski, guztiak maila berean gordinak, batzuek tradizioa baitute Zuberoako hizkuntzan eta literaturan, baina horien arteko batzuetan bada aski gordintasun.

Arazo lexiko hauek konpontzen hasteko, hein handian hizkuntzaren gizarte estatusaren galeraren alderdiari eragin beharko zitzaion, baina ez zatekeen kaltegarri eskolan euskara erakutsi balitz, euskal jendeak hizkuntzaren maila jasora eskolan euskaraz inguratzen hasi balira; Landerretxek 1910ean zioenez, gauza beharra zen a) *euskara semenario handitan irakatsia izatea* eta b) *Euskal-Herri guzian, bai euskara ahanzterat utzia duten herrietan ere, eskoletan edo eskoletarik kanpo, erdararekin edo erdara gabe, euskara irakatsia izatea.* Hori egin ezean —eta egiari zor, Ipar Euskal Herrian ez zen egin—, bestela ere zerbait aitzina zitekeen auzi honetan, euskal idazleei begira bederen: euskal hiztegiak behar bezala eginez eta hedaraziz.

Alderdi honetatik, Azkuek euskalki guztiak baliaturik 1905-06an ondu hiztegia da nabarmenena, nahiz, hasieran bederen, Ipar Euskal Herrian Azkueren hiztegiari ez zitzaion abegi onik egin. Larresoroko semenariotik ale bat bera ere erosi ez izanaz nahigabea erakutsi zion lekeitiarrak Broussaini 1905/XI/26an; egia esan, mende erdi luzea behar izan zuen 1.500 aleak saltzeko. Lhandek hasi eta Lafittek landu zuen hiztegia Ipar Euskal Herriari begira eratu zen (1926); bertan adierazten da hitzak orokorrak

diren, ala Lapurdi, Baxenabarre edo Zuberoakoak diren; Azkueren eta Maurice Harrieten hiztegietan oinarriturik egin zen hiztegi hau; bertan balio handikoak dira Lhandek Zuberoako Zalgizen bildu hitzak. Halaber, erdaratikako euskal hitzak izarño batez markaturik datoz.

Baziren gero herri xeheari begira egin ziren beste hiztegi komertzialago batzuk: Erroman Mirena Beraren *erdera* → *euzkera* (1909-11) eta Ixaka Lopez Mendizabalen *euzkera* → *erdera* (1932). Hondarreko honek Azkue zuen oinarria, aitortu gabe izanik ere, eta hitzen idazkeran Aranaren eragina zeraman iltzaturik, gipuzkoar sabindarren eran; euskaraz dakien erdaldun bati euskarazko testu bat ontzen laguntzeko egin zuen eta garaiko euskaldunek bizi zuten egoera soziologikoaren ispilua da. Plazido Mujikaren gaztelania → euskara hiztegia berankorra da gure aldirako, 1965ean argitara eman zuen. Frantsesetik euskarara jotzeko tresna André Tournier-ek eta Lafittek ondu zuten (1953); hitz berri gabekoa da, bakan batzuk baizik ez dakartza eta euskara dakiten frantses hiztunentzat pentsaturik dago.

## 9. EUSKALKI MODERNOEN GARAPENA ETA EGOERA

Arestiko atalean ikusi dugunez, badira gure aldian euskarari eragin zioten hizkuntza-aldaketa batzuk, baina garai hartan ez baitzen euskara estandarrik oraino, berrikuntza gehienek ezinbestean dialekto taldeei, dialektoei edo eskualdeetako mintzoei eragin zieten. Orduko berrikuntza haiek alderdi batera utzirik, azpiatal honetan, alderdi batetik, gure aldian Euskal Dialektologiaren inguruan egin zen ikerketaz edo datu bildumaz eta euskalkiez eman ziren iritziez ohar orokor zenbait aurkeztu nahi dugu, baina lekukotasunen berri ematean aurkeztu ditugun bilduma lanen zerrenda errepikatu gabe, horregatik, oraingoan llabur mintzatuko gara. Bestalde, ondoko ikerketek gure aldiko euskalkiez zer erakutsi diguten ere llabur aurkeztuko dugu bigarren azpiatalean.

Bonaparteren garaian sistematikoki eta anitz lan egin zen eta euskal herrialde guztietan egon zen jende multzo bat printzea lanean laguntzeko prest, baina Frantzian II. Inperioaldia bukatzeak diru sarrera bakandu zion printzeari, Euskal Dialektologiaren galgarri. Ordura arteko indarraldia eta lantaldeen dinamika bareturik, hurrengo hamarkadetan hazkunde ttikia gertatu zen.

Euskalkiei dagokienez, mugaz bi alderdietako mintzoak gure aldian gaindi bereizteko joera ez da eten. Frantsesaren eta gaztelaniaren indarrak tinkotasunez eragiten jarraitu du Ipar eta Hego Euskal Herriko mugako mintzoetan nahiz barrenekoagoetan, horregatik, Bonapartek 1860-1870 garaian zeukan ikuspegiari honakoa erantsi behar zaio gure aldirako: Irun-Hondarribia eta Bortziriak zertxobait gehiago urrundu dira Lapurdiko

mendebaletik, Bidasoaldea Lapurditik, Baztan Lapurdi eta Baigorritik, Esteribar eta Erroibar Baigorritik, Aezkoa Garazitik, Zaraitzu Garazi eta Zuberoatik eta Erronkari Zuberoatik. Beharbada alderik handiena ez da morfosintaxian sumatu, baina hiztegian eta esamoldeetan ezagun du eta morfologian ere zertxobait aldatu dira bi alderdiak. Arlo fonologikoan suma daitekeen aldea zaharragoa da, baina ahoskera batzuetan ere ezagun du erdaren eragin berritzailea.

**9.1. Azterketa eta hipotesi zenbait**

Erakuts dezagun lehenik gure aldi honetan zein mintzo jo izan diren euskalkitzat. Van Eys (1879) eta Uhlenbeck (1909-10) holandarrek sei euskalki bereizi zituzten: bizkaiera, gipuzkera, lapurtera, nafarrera, behe-nafarrera eta zuberera. XX. mende hasierakoa da Vinsonen proposamena, Bonaparteren lanean oinarri hartu zuena. Jaun honek Ipar Euskal Herriko mintzoak sailkatu zituen: lapurteraren barrenean, berezko mintzoa, *varié* deitzen zuena (Ainhoa), mistoa (Arbona, Arrangoitze, Basusarri) eta itsasaldekoa bereizi zituen. Mendebaleko behe-nafarreran, berriz, Lapurdikoa, erdigunekoa (Lapurdiko ekialdea, Hazparnealdea), mistoa (Beskoitze, Mugerre eta Lehuntze) eta Aturrialdekoa (Urketa); Baigorriko mintzoa ez da inon ageri. Ekialdeko behe-nafarreran ere lau aldaki bereizi zituen: Bardozekoa, Arberoakoa, Amikuzekoa eta Garazikoa; hondarreko bi taldeotan sailkatu zituen Oztibarreko herriak. Hondarrik, zuberera bere estatusean bereiz eta baturik zekusan.

Azkuek, berriz, zazpi dialekto aurkeztu zituen bere hiztegian: Bonaparteren bi goi-nafarrerak eta bi behe-nafarrerak goi-nafar eta behe-nafar bakarrera mugatu zituen eta erronkarierari dialekto estatusa eman zion; zekuskien gainerateko euskalkiak ohiko lauak dira: bizkaiera, gipuzkera, lapurtera eta zuberera. Honezaz landa, lekeitiar handiak Nafarroa Garaiko Aezkoako (1927) eta Pirinioen ondoko Erronkariko (1931) mintzoak bildu eta aztertu zituen. Ez zuen Zaraitzuko euskara aztertu, baina bere hiztegi ospetsuan ele anitzek ordezkatzen dute ibar honetako mintzo berexia; Iribarrenen *Vocabulario navarro*-n ere Zaraitzuko hitz ugari dator eranskinean.

Euskal dialektoen zatiketaz egin ziren proposamenetan bada ondoko beste bat, gerora hautsak harrotu zituena. Lacombek euskararen barrenean bi dialekto daudela adierazi zuen (1924); zioenez, gipuzkeratik bizkaierara dagoen jauzi lektala handiagoa da beste euskal mintzo guztien artekoa baino: hartara, bi euskalki daudela zioen, batetik bizkaiera eta bestetik, erdialde-ekialdeko mintzoek osatzen duten taldea. Bizkaieratik gipuzkerara jauzi handia dagoelako ideia hau ez zen guztiz berria: Duvoisinek (1860), Bonapartek (1869), Campionek & Broussainek (1920) edo Urkixok (1929) aipaturik zuten orduko. Iritzi honetan Uhlenbeck holandarrak urrats bat gehiago egin zuen (1947): antzina bizkaiera aparteko beste hizkuntza bat izan zitekeela gaineratu zuen; zioenez, denboraren

joanean euskarari hurbilduz eta berarengana bilduz joan zen Bizkaiko mintzoa. Iritzi honetatik urrundu gabe ibili ziren gerora Lafon (1955) eta Jacques Allières (1981), baina hainbat argudioren bidez, Antonio Tovar-ek (1959) eta Mitxelenak (1964) iritzi honi aurre egin zioten.

Lafonen dialektologia kontrastiboko saio ttikiak guztiz azterketa onuragarriak izan ziren. Zuberoako azentueraz jardun zuen (1935), Leizarragarenarekin eduki zezakeen loturaren berri emanez. Larraineko egonaldiak lanerako baliatu zituen euskaltzain frantses honek (1958, 1959). Garai hartan horren ahul zebilen dialektologia kontrastiboaren ildotik jo zuen: Aezkoako euskarak, Zaraitzukoak eta Erronkarikoak euskalkien banaketan daukaten kokaguneaz idatzi zuen (1955); saio hartan Ipar Euskal Herriko nahiz Nafarroa Garaiko mintzo gehiago ere aintzat hartu zituen. Aztergai diren mintzoen ezaugarriez jardutean, jabetzen zen frantziarra batasun edo bereizketa-ezaugarriak ote diren argi adierazi beharra dagoela.

Mitxelenak ere azterketa kontrastiboak egin zituen: ordura arte esandakoen aurka eta Arabako datu zaharrak aztertu ondotik —bereziki 1562ko Nicolao Landuchioren Gasteiz inguruko hiztegian oinarriturik—, 1958ko proposamen iradokigarri batean, Arabako euskara «hegoaldeko» dialektotzat jo zuen, Bizkaikotik bereizirik. Pirinioetako bi mintzo ere aztertu zituen, baina ondoko Ipar Euskal Herriko nahiz Nafarroa Garaiko datuak aintzat harturik: 1953ko udazkenean Erronkari ibarreko Izaba eta Uztarrozen hainbat datu bildu zituen eta ondotik, 1954an, Erronkariko euskararen sistema fonologikoa aztertu zuen. Urte batzuen buruan, 1958ko udaberrian Zaraitzura jo zuen datu biltzera eta 1967an ibar honetako euskararen azterketa fonologiko bat argitaratu zuen.

Irizar azkoitiarrak xx. mendearen erdialdetik harat euskal dialektoak zein eta zenbat diren aztertu zuen (1949). Irizarrek Bonaparteren ikuspegiari men egin zion bere obra guztian gaindi eta hari egin zizkion aldaketak ñabardurak dira. Adieraztekoa da euskalkiak aztertzeko Irizarrek aditzaren morfologia baizik ez zuela baliatu, baina lan kontrastiboa egiten zuen eta dialektoen, azpidialektoen eta mintzoen arteko mugak finkatzeaz fierki arduratu zen. Irizarrek eta Mitxelenak elkarri idatzi gutunetan ageri da 1950eko hamarkadan euskal hizkuntza-atlasa egiteko izan zen asmoaren eta egin ziren bilkuren berri: alderdi fonikoa edo morfologikoa nork prestatu behar zuen, inkestak nork egin zitzakeen, zein inkestagune proposatzen ziren eta abar. Azkoitiarraren proposamenak, zein inkestagunetan lan egin behar zen edo adizkietan zer galdegin behar zen, 1955-56. urteetan argitaratu ziren, baina ezin uka interes beteko gai ugari ageri dela hil baino bi urte lehenago argitaratu zituen gutunotan (Irizar 2001: 135-169).

Atlasaren filosofia jarraiari heltzeko aholkatu zion Mitxelenak Ana María Etxaideri eta Nafarroako herrietan gaindi 301 galderaren erantzunak bildu zituen 1965-67 artean. Ibar euskaldun guztiak ibili zituen, Erronkariko Izabatik Burundako Ziordiaraino

bitartean; ondotik, Azkueren 1922-25 bitarteko *Erizkizundi Irukoitz*-eko emaitzak antolatu eta argitara eman zituen Etxaidek.

Gure aldiaren bukaeran egin ziren lexiko-bilduma batzuk ere aipa daitezke: Arano, Luzaide eta Arruazu (1963-64), Baztan (1962), Eibar (1958), Leitza (1963-64, 1967), Lezo eta inguruak (1962), Loiola (1967). Ikerlan osoa da Toribio Etxebarriak Eibarko lexikoaz Caracasen ondu zuena (1965-66); lehentxeago adizkiak ere argitaratu zituen (1963-64). Hiztegia guztiz aberatsa da eta ez dio muzin egiten mailegu herrikoiak biltzeari, baina Eibarkoak ez diren hitz batzuk ere badakartza, egilearen ikuspegi garbizalea salatzen dutenak: *entzunmena, emakia, euskaltarra, ezilbiartasuna*…

### 9.2. Hipotesien ondoko urratsak

Ondotik, gure aldian sortu jende zaharren euskaran oinarriturik edo gure aldiko datu bildumak aintzat harturik, XIX. mende bukaerako eta XX. mendearen garaiko euskalkien ezaugarriak aztertu eta hainbat sailkapen lan egin dira Euskal Dialektologian, eta irizpideak ere finduz joan dira, emaitza berriak ekarri dituztenak. Aurkezten ditugun bost atalotan ez dago ikertzaileen aldetik adostasun maila bera, baina honela laburbildu daiteke dialektologiaz kezkatu direnek XX. mende bukaeran eta XXI.aren hasieran eraiki ezagutza: bost taldeetan beharko da ikerketa gehiago, ezagutza sendotzeko eta froga beregain batzuk eta besteak elkarrekin uztartuz euskararen azterketa aitzinatzeko:

1. Zubereraren euskalki estatusaz eta beraren barreneko batasunaz ez da zalantzarik izan. Beren arkaismo bateratuen kopuru hazian oinarriturik, proposatu da aspaldi zaharrean Zuberoa eta Erronkari ibarrak izan zirela euskara orokorretik edo Euskara Batu Zaharretik bereizi ziren lehen erkidegoa, izan ere, aspaldiko berrikuntzak ere partekatzen dituzte bi eskualdeok; ondoko ikerketek erakutsiko dute hipotesi honen indarra zenbaterainokoa den. Bestalde, Zaraitzuko mintzoaz azterketa historikoak falta dira, baina ematen du garai batez Zuberoaren orbitapean ibilirik, ondotik Nafarroa Garaiko ezaugarriak bilduz joan dela
2. Lapurdiko eta Nafarroa Behereko mintzoen arteko eten dialektalik ez da sumatu eta ez da ezaugarri sortarik aurkitu mendebaleko eta ekialdeko bi euskara baxenabartar justifika litzakeenik. Ikerketek nafar-lapurtera euskalki bakartzat aurkeztu dute. Aztertu beharko da historikoki ere gauzak honela izan ote diren, iraganean Lapurdik eta Baxenabarrek beren artean alde handirik izan ote zuten jakiteko
3. Ez da ezaugarri sortarik iparreko eta hegoko bi nafarrera edo bi dialekto nafar daudela justifika lezakeenik; hartara, hego-nafarrera ez da nafarreraren azpidialekto bat baizik eta badirudi, gainera, ezaugarri batzuk bederen berankorrak dituela;

irudi osoagoa izateko, ordea, Aezkoako mintzoak iraganean zein ezaugarri zituen jakin beharko genuke. Baztango ekialdeko herrietan, berriz, handia da Lapurdi-Baxenabarre alderdiko euskararen eragina, iraganeko denboran nabarmenago zena

4. Larramendiz geroztik Gipuzkoako euskararen nagusitasuna eta hedatzeko joera ezagunak dira: ezker, eskuin eta behe hedatuz joan dira itxuraz erdigunean sortu diren hainbat hizkuntza-ezaugarri berri. Gure aldian Gipuzkoako erdigune osoan eta Gipuzkoako hego eta eskuin gehienean egin izan den mintzoa, erdiguneko euskalkitzat jotzen da. Araitz-Beteluko ibar nafarrak lotuko lituzke erdiguneko dialektoa eta nafarrera; dena den, Leitzaran aldeko euskarak ere merezi luke azterketa xehea. Gipuzkoako Bidasoaldea eta Oiartzun ere hurbil leudeke beren artean, Lapurdiko eta Nafarroako aspaldiko ezaugarri berriak baliatzen ziren bertan gure aldian. Deba ibarreko euskara, berriz, mendebaleko Euskal Herriko mintzoari loturik dago, baina sakona da Bergaran eta Antzuolan euskara giputzaren eragina; aldiz, Elgoibar, Mendaro eta Mutriku bi dialektoen artean zangalatrau daude. Gipuzkoako euskararen iragana da ongi aztertu beharko litzatekeena eta zorigaitzez Beterri eskualdeko testu zaharrik ez dugu ezagutzen
5. Arabako euskararen kokagunean denborak garrantzia du: aztertu dugun XIX. mende bukaera eta XX. mende garaian Bizkaiko mintzo orokorrarekin batean ageri da Arabakoa, baina adostasuna dago Gasteizek iraganean hizkuntzaren aldetik garrantzia izan zuela aitortzean; etorkizuneko ikerketek hiri honen eraginaren daten auzia hobeki zehaztu beharko lukete. Hipotesi baten arabera, Arabako euskarak euskalki arkaiko baten azken hondarrak erakusten ditu: Arabako, Bizkaiko eta Gipuzkoako lurralde zabalean eta Nafarroako mugako eskualde batzuetan mintzatu antzinako euskalkia zatekeen hau, Euskara Batu Zaharraren bigarren zatitzearen ondorioz mendebalean sortua. Bertatik, hipotesiaren arabera lehenik bizkaiera eta ondotik gipuzkera bereizi ziratekeen, eta bitartean Arabako euskara mendeetan gaindi indarra galduz joan zatekeen

## 10. LITERATURA EUSKALKIAK

### 10.1. Gipuzkera

Larramendik euskal kultura eta idazkuntzaren alde gramatikaren eta hiztegiaren bidez egin saioak eragina izan zuen Gipuzkoan eta XVIII-XIX. mendeetan Beterriko mintzo-eredua nagusituz joan zen idatzizko arloan; honek halako batasun maila bat eman zion gipuzkerari; gainera, liburu ugari argitaratu zen herrialde honetan Larramendiz eta

Kardaberatzez geroztik (ik. 7. kap., § 7.2). Halako nagusitasuna iritsi zuen Gipuzkoako euskarak idatzizkoan eta indar hori herrialdearen mugetarik harat hedatu zen. Baziren idazle bizkaitarrak Gipuzkoako ereduan idazten zutenak, baina mintzo giputzeko idazleek ez zuten Bizkaiko euskaran izkiriatzen. Gogoraraztekoa da, bestalde, saihetseko mintzoa dela Bizkaikoa, eta erdigunekoa dela Gipuzkoakoa. Bizkaia, Nafarroa Garaia eta Lapurdi euskal alderdiek Gipuzkoa zuzenean ukitzen eta besarkatzen dute, ondorioz, Gipuzkoako mintzoa erdigunekotzat sentitzen da hor gaindi; saihetsetako euskaldun frankok hein batez nola edo hala ulertzen dute Gipuzkoako hizkera.

Bonaparteren iritzian gipuzkerak behar zuen izan Hegoaldeko literatura-eredua eta lapurterak Iparrekoa. Euskara guztia aintzat hartzekotan, berriz, gipuzkera behar zuen izan, Luchairek ez bezala, printzeak uste baitzuen Ipar Euskal Herriko euskara Hegoaldetik eramana dela. Baina arrazoi praktikoak ere eskaini zituen gipuzkeraren alde: mintzo honen jatortasuna, «erregulartasun» gramatikala edo hiztunen kopuru ugaria (ik. Gómez, 2007: 181) eta baita liburu honetako 7. kap. ere.

Gure aldiari dagokionez, giputzak dira euskal idazle gehienak: Juan Mari Torrealdaik dakarrenez (1977), 1900 arte euskal idazleen artean % 30 gipuzkeraz egiten den eskualdeetakoak ziren, 1900-1936 bitartean % 42'5 eta Hegoaldeko anaiarteko gerraren ondoko aldian, berriz, % 68; nagusitasun gaitza da. Ulergarri da, honela, hainbat euskaltzalek euskara baturako gipuzkera hobestea; esate batera, Federiko Belaustegigoitia arabarrak honela zekusan (1909). Euskaltzaindiak, behin-behineko erabakian, gipuzkera hautatu zuen 1920/XII/29an erakundearen barreneko erabilerarako: *bein-beineko euskalkia (diploma ta agerkarietan) Giputza izatea*. Beste proposamen bat ere izan zen garai hartan, Broussainek eta Campionek egina (1920): lapurtera eta gipuzkera, bien arteko koine bat baliatu nahi zuten euskarazko literatura eredu nagusia eraikitzeko, Orixek edo Lizardik inoiz egin bezala.

So egin diezaiogun orain garai hartan idatzizkorako aski arrakasta bildu zuen eredu bati. Azkuek batasunerako zuen asmoa *Gipuzkera osotua* izeneko ereduan gauzatu zen; ardaztzat gipuzkera hartu eta gainerateko euskalkietako berezitasunak erantsirik ondu zuen asmoa: *-tzu* ugaritasun atzizkiaren erabilera orokortzea nahi zuen, *batzuk*-ez gain, *bitzuk, irutzuk, zenbaitzuk, nortzuk, zertzuk, zeintzuk* eginez; *egun* 'gaur' / *gaur* 'gaurko gauean' bereiztea nahi zuen, *-in* bukaera baliatzea —*artzain, usain, izokin, ipuin, arrain*—, lehen pertsonarentzat *nire* eta *niri* baliatzea, *bage* 'gabe' egitea, *bere* beharrean *beraren* erabiltzea, *det* adizkia beharrean *dut* egitea —espreski eskatzen die hau giputzei—, *jarri* eta *jakin* erako aditzetan ahoskera belarea ez, igurzkari sabaikaria ibiltzea; esanahia bereizteko balio duenean *h* idaztea… Eredu honen adibidea dugu 1918an idatzi zuen *Ardi galdua* gertirudi edo elaberria. Gerora era teorikoagoan itxuratu zuen eredu hau, 1933ko *Gipuzkera osotua* lanean.

Asmoak hein bateko arrakasta erdietsi zuen eta Hegoaldeko gerraren ondotik hainbat idazlek eredu hau baliatu zuten, baina baziren molde honen ustezko jarraitzaileak, Azkueren legeak jarraitzen ez zituztenak; esaterako, kontsonante sudurkari eta albokariak palatalizaturik idazten zituztenak, edo bestela, ustez eta gipuzkera osotuan idazten zuten, gipuzkera petoan egiten zutenak. Jokaera hau ikusirik, gipuzkera osotuaren ustezko erabiltzaile batzuen seriotasunik ezak asper-arazirik, hainbat bizkaitar zapuztu eta beren sortzezko mintzoan idaztera lerratu ziren, batasunari begiratzen ez zioten hainbat giputzen jokabideaz higuinarazirik.

Ereduak eredu eta zaletasunak zaletasun, ezin uka daiteke aldi hartan Gipuzkoako mintzoa idazki-liburuetan usu ageri zela Gipuzkoaz kanpo, esaterako Nafarroa Garaian, baina ohitura edo joera hau ez da gure aldikoa bakarrik, lehenagotik zetorrena baizik, beharbada Elizaren eraginez edo apez giputzek Nafarroara usu jo izanagatik, Gipuzkoa Iruñeko apezpikutegiaren menpe baitzegoen.

### 10.2. Lapurtera eta Nafarroa Behereko euskara

Oro har, Ipar Euskal Herriko idazleen artean ez da izan Baxenabarreko idazki dialektal sendoak garatzeko giro berezirik, XVII eta XVIII. mendeetan bereziki. Euskal idazle baxenabartarrek Lapurdiko mintzora —liburuak idazten zirenera— jotzen zuten eskuarki; XIX. mendean baxenabarreraz ageri diren idazkiak Bonapartek eginarazi katiximen itzulpen dialektalak dira, kopuru arras murritzean argitaratu zirenak, filologo zenbaiten esku ibili zirenak, baina herriak baliatu gabe kasik. Bonaparte printzeak arrazoi zuen baxenabar *eskuara* liburhistorik gabeko mintzotzat hartu zuenean.

Bonaparteren bizialdiaren ondoko idazle baxenabartarren lana aztertzean ere, ezagun du ez dela Baxenabarreko euskara garbian idazteko ohitura handirik izan; esate batera, liburu luzeen egile Arbelbide kalonjea (1841-1905) Zaroko seme zen, garaztarra, baina haren euskaran Lapurdiko euskararen itzala ageri da. Ibarrolako M. Salaberrik ere Lapurdi aldera begira itzuli zuen San Mateoren Ebanjelioa Baxenabarreko euskarara XIX. mendearen bigarren erdian. Egoera hau ez da anitz aldatu XX. mendean; esate batera, Amikuze eskualdeko adineko euskaldun xumeek, elizan aste oroz Lapurdiko euskararen moldeak entzuten dituztenek, hura ederresten dute gehienik, hura zaie euskararik egokiena, Hazparne alderdi horretakoa edo Lapurdi barrenekoagoa, ez dute tradizio baxenabartar sendo bat ezagutu, ikasi edo estimatu; liburuetako euskara Lapurdin sortzen eta idazten da, horrela ohitu dira eta horrela onesten dute. Ez da atzendu behar, bestalde, Amikuzera predikatzera Hazparneko misionestek jo ohi zutela eta honek ere eragina utzi dukeela.

Bestalde, gauza jakina da Hegoaldean Lapurdiko liburuak Nafarroa Garaira eta Gipuzkoara bederen heldu direla; ezaguna da Axularren *Guero* eta Xurioren *Imitacionea*

Nafarroa Garaiko apez eta idazle zenbaitek ezagutu eta baliatu dituztela. Gipuzkoan ere, ezaguna zen lapurtera: Lardizabalek, Ubillosek, Iturriagak edo Agirre Asteasukoak baliatu zuten (ik. 7. kap. Ipar Euskal Herriko iturriez § 2.2; ik. Ipar Euskal Herriko lexikoaz § 4.5.3.3).

Lapurtera idatziaren norabideari so egitea garrantzizkoa da. XIX. mendearen bukaeran hasirik eta XX. mende guztian gaindi, Zuberoa salbu Ipar Euskal Herri guztirako balio izan duen eredu literario bat sortu, gauzatu eta indartu da Ipar Euskal Herrian eta Lapurdiko mintzo idatziak bere denboran zuen zereginetarako balio izan du: Lapurdi-Baxenabarretan *Nafar-lapurtera* izendatu den koinea ibili da, Ipar Euskal Herriko idazkera bateratua. Naturalki sortu zen nafar-lapurtera, planifikatu gabe, eguneroko lanketaren bidez, XIX. mendearen bukaeran indartu zen eta XX.aren lehen herenean guztiz finkatu. Joera berriaren muga 1880 urtean ezarri zuen Lafittek eta idazteko, ohiko ahozko dialektoa baino hobea dela zioen; eredu estandar bat sortzen ari zela zioen 1944an, liburu idatzietan eta predikuetan oinarritua, morfologia lapurtarraren gainean osagai baxenabartarrak baliatzen zirela eta inoiz baita zuberotarrak ere. XVII, XVIII eta XIXan Ipar Euskal Herrian lapurterak funtzionatu zuela dio eta baxenabar eta zuberotarrek Lapurdiko liburuak ukan zituztela oinarri eta begiraleku. Nafar-lapurteran instantzia supradialektaleko jardunguneek eragina izan zuten: Larresoroko semenarioak lehenik, Belokeko abatetxeak 1875etik aitzinera, 1887tik *Eskualduna* kazetak; baita *Gure Herria* aldizkariak edo Abbadia, Barbier, Etxepare Bidegorri edo Pierre Apeztegi idazleek ere.

Lafitteren arabera, delako *neo-labourdine* edo nafar-lapurtera horrek Ipar Euskal Herrirako balio duen aldetik, euskara batu orokorraren bidean urrats bat gehiago ekarri du (1979 [1944]: 6-7), eta iritzi berekoa zen Larre euskaltzain baigorriarra ere (1988), *Goazen batuari buruz herriarekin* zioenean, baina Hegoaldeko zenbait idazle eta hizkuntzalarik aurkako iritzia erakutsi dute: Mitxelenak (1959) edo Krutwigek (1962), esate batera. Sarasolak dioen bezala (1993), Baxenabarreko ereduek aspaldikoa dute sarbidea lapurtera idatzian eta bestalde, frantsesak lapurtera idatzian duen eragina, XIX. mendean areagotzen dena, ongi aztertu behar den gauza da. Idazkera literarioaren bilakuntzan Lafitte eta Hiriart-Urruti zaharra elkarrengandik urrun daude: hazpandarrak zioen euskalki guztien ortografia batzea dela, frantsesa, italiera, gaztelania, gaskoia eta probentzala ortografiaz batzea bezala (1901); egiazki, Hiriart-Urrutik *Eskualduna* kazetan abiatu bidea jarraitu baizik ez zuen egin Lafittek *Herria*-n, baina hirurogeiko hamarkadan euskara batuari etorri zitzaion txanda eta horretan ere ibili zen Lafitte.

### 10.3. Bizkaiera

XIX. mendearen bukaeran literaturako eredu-hizkuntza gisa indargaldurik zegoen bizkaiera. 1820-1870 bitartean liburu bakan argitaratu zen mintzo honetan eta 1870ean

gertatu zitzaion susperraldian ez zen idatzizko eredu finkaturik sumatu, Mogelen eta Pedro Antonio Añibarroren bideak ez baitzuen jarraipenik izan mendean zehar; mendearen bukaeran idazle bakoitzak bere bidea urratzen zuen. Añibarroren hiztegia eta gramatika ez ziren 1963 eta 1969 arte argitaratu, beraz, J. M. Zabalaren 1848ko aditz taulak ziren balizko eredua garai hartan. Nolanahi ere den, 1890-1936 bitartean bizkaieraz argitaratu ziren lanen kopuruak gorakada izan zuen.

Mende bukaeran Bizkaikoak baizik ez diren aldaerak lehenesten dituen eredu berri bat indartzen hasi zen; joera honen hazia aurreko gramatikari batzuen zenbait iritzi eta hipotesitan zetzan eta ondoko bizkaiera ahozko nahiz idatzizkoaren etorkizuna baldintzatu zuen. Eredu hau honela defini daiteke: hiperbizkaierak Bizkaiko hizkuntza-aldaera endemiko edo esklusiboak lehenesten ditu, berdin delarik aldaera horiek Bizkai guztikoak diren, ala eskualde edo zoko bakar batekoak diren, berdin delarik demolinguistikoki aldaera hiperbizkaitarrok hiztun gutirenak izatea. Bizkaiko aldaera bati hiperbizkaierako kide izateko indar edo eskubiderik gehien, ondoko herrialdeetan baliatua ez izateak dakarkio. Eredu honen sakonean euskarari buruzko garbitasun irizpide bat zegoen, bizkaiera garbia nahi baitzen, akatsik eta hutsunerik gabeko bizkaiera erregular eta logiko bat eraiki nahi zen (Laka 1986: 711).

Honela, osagarri pluralak adierazteko *-z* morfema lehenetsi zen: Bizkaian tradizio eta hedadura gehiago duten *ditut* erako Nor Nork adizkiak baztertu eta *dodaz* erako aldaera berriak nagusitu ziren testuetan, *baleuz* aldaera *balitu* arruntaren ordain, *ebazan* 'zituen' nahiago zen *zituzan* baino. Berebat, *gintzazan* 'ginen' bultzatu zen eta ez *ginen* & *ginean*. Ustezko euskara zahar baten izenean, osagarri datiboa duten perpaus tripertsonaletan *-eu-* erroa iraganerako utzi zen eta *-au-* berria bultzatu zen orainerako: oinarri zaharra *-au-* dela, Astarloak, J. M. Zabalak, Campionek eta van Eys-ek aldeztu zuten; hartara, oraineko aldaeretarako *dautso* 'dio', *dautsozu* 'diozu' erakoak bultzatu ziren. Kirikiñok, esaterako, *eskatu eutsan* 'zion' baina *ipiñi gura ei dautso* 'dio' zerabilen mende hasierako bigarren hamarkadan eta halaxe zegien «Otxolua» idazleak ere. Dena den, bizkaiera idatzian ez zuten aurrera egin Azkueren *nai* 'naiz', *dai* 'da', *gaiz* 'gara', *daiz* 'dira' edo iraganeko *itzan* 'zen', *itzazan* 'ziren' adizkiek (1891: 197).

Ezaugarri gehiagok bereizten dute joera hau: hiperbizkaiera hedatzean *urten* edo *igon* aditzak laguntzaile iragangaitzarekin baliatzeko joera bultzatu zuten J. M. Zabalak lehenik eta Azkuek ondotik. Kirikiñoren ipuinetan aldaketa ikusten da, lehenik iragankor jokatzetik ondotik iragangaitz jokatzera jo zuen Mañariako idazleak; *beharko, nahiko* edo *gurako* eren ordain, berriz, *behar izango, nahi izango* edo *gura izango* nagusitu ziren. Era faktiboa baliatzeko aukeraren arabera, *irazan* edo *ikurri* aditz berriak sortu zituzten sabindarren eskolakoek. Berebat, mende hasieran aditz trinkoek bultzada nabarmena izan zuten, batez ere sabindarren eskolan, herri erabilerarik ez zuten adizki trinkoak

agertzen hasi ziren Bizkaiko idazkietan. Sintaxian, galdetzailez eratu perpaus erlatiboak ez ziren bultzatu, nahiz Aranak bazerabiltzan: *bijaldu ebazan ona bere gaiztakeri-egiliak, zeintzuk etorri zirian, euron aginpena egitteko* (Laka 1987: 22). Berebat, *zerren* eta *eze* partikulen bidez hasitako perpaus konpletiboak ere ez ziren bultzatu.

Hiperbizkaieraren indarra hainbat idazlerengana iritsi zen: bultzatzaile nagusia Azkueren *Euskal-Izkindea* izan zen, idatzizko bizkaieraren aditz morfologia, gramatika eta are filosofia, haren iritzien arabera berriztatu zuena, baina ezaugarri batzuetan Arana bera ere partaide izan zen. Hasieran Aranak aditzean eta joskeran aurreko tradizioari jarraitu zion eta ortografian Mogelen ildoari lotu, bide hau azken mugaraino eramanik, gainera. Azkuek aditz laguntzailearen sisteman eta joskeran sortu zuen zenbait berezitasun berri, ordea, Aranak ondotik bereganatu zituen. 1895 arte Aranak zerabilen bizkaiera eredua Azkueren ukiturik gabekoa zen, baina 1897ko *Egutegi Bizkaittarra*-tik aitzinera, Aranak bere aditz laguntzailearen sistema aldatu eta hiperbizkaierazkoa hartu zuen (Laka 1987: 31, 35); handik harat *deu-* erako oraineko adizki tripertsonalak eta *-it-* pluralgilea duten Nor Nork adizkiak osoki bukatu ziren eta galdetzailez sortu menpeko perpausak ere bai. Aranak ere hiperbizkaieraren oinarrizko irizpideak jarraitu zituen, tradizio idatzia alde batera utzirik, garbitasunaren izenean analogia eta erregulartasuna helburu bilakaturik; honela zioen: *y que cada uno de esos dialectos se forme con los elementos gramaticales y lexicológicos más puros que hoy se encuentren esparcidos en los diferentes subdialectos y variedades de la respectiva región* (1896).

Hartara, euskalki bakoitzeko azpieuskalki edo aldakien arteko aukera bat egin behar zen idazteko, garbitasunaren arabera. Bizkaieraren bi era nagusi zeuden: ordura arteko testuetako tradizio idatzia eta hiperbizkaiera berria, asmoz zaharzale eta garbizale zena; bizkaiera batu bat lortzeko aukeratu beharra zegoen. 1897.ean sortu zuen Azkuek *Euskalzale* aldizkaria, eredu berriaren zabalkundea azkarki bultzatu zuena, ziur aski Aranaren hautuan zerikusia izan zukeena: Aranak eredu berria aukeratu zuen, garbiena eta zaharrena zelakoan, Bizkaia berria eraikitzen hasteko. Aranak herrialde bakoitzari euskalki bana esleitzen zion batasunerako, eta ondorioz Bizkaiko euskal idazleek bizkaiera batua behar zuten. Herrian erroturik zeuden hizkuntza-formen baliatzaile zen Kirikiño idazleak, eta berak bezala baita beste idazle bizkaitar batzuek ere, berandu gabe hiperbizkaierazko aldaerak baliatu zituzten beren idazkietan.

**10.4. Zuberera**

Herrialde ttipia da Zuberoa, jende kopuru handirik gabekoa, biztanleen aldetik emeki-emeki apalduz joan dena: ezin itxaron liteke gaitzeko literatura-lan idatzi edo letra girorik abeltzainen erkidego ttipi honetarik. xx. mendearen hasierako lau hamarkadetan

ia ez zen Zuberoan euskal liburutik agertu, aldizkarietan aurkitu behar da garai hartako Zuberoako euskara idatzia: *Almanak Uskara edo Ziberouko Egunaria* ateratzen zen urtean behin kristauen giroan. Bestalde, hamar bat idazlek hogei urtez biper eta gatz handiko ipuin franko idatzi zuten *Gure Herria*-n. Aldizkarietan argitaratu zen hitz lau zuberotar hark beste aldi batzuez Elizak eragin ohi zuen zuberera idatzia ordezkatu zuen aztertzen ari garen hamarkada haietan. xx. mendearen bigarren erdiaz diharduela, Peillenek dio zuberotarrek antzerkirako eta kanturako duten joera beren euskal analfabetismo sakonaren araberakoa dela (1992: 94). xx. mendearen bigarren erdian pastoral ugari idatzi zen zubereraz, baina gaiak ez ziren lehenago bezala erlijiozkoak izan, Euskal Herriko seme-alaba garrantzizkoen bizikizunak baizik: zuberotar, baxenabartar, lapurtar edo Hegoaldeko jende handien gertakariak agertu ziren taula gainean.

Zuberoako euskaran bokalen arteko kontsonante igurzkariak ohiz ahoskatzen dira, ez dira Baxenabarren bezala galtzen, beharbada azentu ereduaren edo doinuaren izaeragatik. xix. mendearen erdialdera bokal arteko ttap fonema galdu zen Zuberoan, baina testuetan berdin-berdin idatzi zen <r>, ahoska baledi bezala, nahiz idazkeran zalantzak eta hutsuneak ageri diren. Alta, gainerateko kontsonante igurzkariak ahoskatzen eta idazten dira Zuberoan, horregatik, Intxauspegandik J.-B. Constantinengana joanik, edo Kadet Oxibarrengana, *Gure Herria*-ko idazleengana, Jauregiberritarrengana edo Epherretarrengana joanik, ez da jauzi handirik sumatzen Zuberoako testuetan. Alderdi handiena ahozko eta idatzizko testuen artekoa da, bertsoetarik edo antzerkitik idazki landuagoetara, testu jasoen arteko aldea ez da hain handia xix eta xx. mendeen artean. Gauza jakina da, bestalde, batasun nabarmena duela horren ttipia den herrialde honetako mintzoak, eta prosa idatziak ezagun du.

Ez dira idazle anitz garai honetan Zuberoan jardun zutenak, horregatik, zerrenda osatuxe bat ekarri nahi izan dugu eta ondorioz, aldea dago idazle batzuen eta besteen garrantziaren artean: xix. mendean sortuak dira Jean-Baptiste Borthiri-Sala, Constantin aita-semeak, Fabien Hastoi, Pierre Lanouguere «Pette Xibero», Lhande, Kadet Oxibar edo Jean-Pierre Picochet. Beste hauek xx. mendekoak dira: Dominique Beheti, Pierre Bordazaharre «Etxahun Iruri», Junes Casenave-Harigile, Guillaume Epherre, Grégoire «Ddiddue» Epherre, Mixel Epherre, Johañe Epherre, Jean Etxegoren, Alexis Etxekopar «Attuli», Madeleine de Jauregiberri, Jean de Jauregiberri, Clément de Jauregiberri, Louis Ligetx, Jean-Baptiste Mazeris, Mirande eta Tomas Uthurri. Kepa Altonaga biologoak Atharratze alderdi horretan 1914ko gerla aitzintxoan euskal idazleen talde bat izan zelako hipotesia haizatu du (2007), baina dauden baino datu gehiago beharko dira balizko jarduera hura baieztatzeko ala ezeztatzeko.

Aspaldiko idazle zuberotarren artean jauntxo dirudunak edo apezak ditugu; zuberotarren lehen idazkietan, herrialde honetako aldaera berezkoak ageri dira, baina

joera nabarmena dago Lapurdi aldera eta inoiz Baxenabarrera begira ere idazteko. Halatan, Athanase Belapeireren 1696ko katixima itzulia da zubereraz sendo idatzitako lehen lan luzea. Esan ohi da katixima honek aski ongi definitu eta finkatu zituela zuberera batuaren ezaugarriak, ondoko hiru mendeetako maila gorako zuberotar testuak era haien arabera idatzi diren heinean; ik. Davant (2009: xvii). xviii. mendearen erdialdekoa da Martin Maisterren *Jesü Kristen imitazionea*-ren itzulpen luzea ere, Zuberoako mintzoaren berezko izaera leial islatzen duena. Mintzo zuberotar leiala da Jusef Egiategirena ere, haren berezitasun lexikoak gora-behera. Leial islatzen du xix. mendeko Zuberoako ahozko euskara Pierre Topet «Etxahun» Barkoxeko koblakariak ere; haren kantoreetan gardentasunez ageri da mailegu bearnesek ahozko mintzoan zenbateko eragina zuten. Pastoraletako mintzoak azterketa berezia eskatuko luke ziur aski; kantatuak izateko idatzi ziren pastoralak, ez ziren liburu bidez argitaratzeko idatzi, ahoz antzesten ziren: ahozko mintzo xaloaren ezaugarriak, bearnesetik hartu maileguak… honelako ezaugarriak ugari ageri dira Xiberoko herri antzerkian, idatzizko euskal testu diplomatikoagoetan baino areago.

Alta, xix. mende haren erdialdean lan literario sendoak idatzi zituen Intxauspek mailegu gutirekilako euskara zerabilen. Bonaparte hizkuntzalariaren laguntzaile izan zen eta, egin zituen itzulpen eta jatorrizko lanetan Zuberoako bereko aldaerak erabiltzeko arretaz jokatu zuen. Euskararen apologia egiten ere jardun zuen Baionako bikario nagusi zunharretar hark, baina ez zen Zuberoako mintzoaren izaeraz kezkatu zen bakarra izan xix. mendearen erdialdean: grafiaz, morfologiaz eta alderdi lexikoaz xehetasunak eman zituzten Abbadia & Xaho (1836), Xaho (1856), Intxauspe (1858) eta Gèze (1873) gramatikariek. Ondotik, herriaren ahotik bildu eleak dakartzan hiztegi bikain bat eraiki zuen Larrasketek 1939an; ez da atzendu behar, 1926ko hiztegian Lhandek Zuberoako hitzak bereizten dituela.

xix. mende erdiko gramatikari haien asmoa zen Zuberoan euskaraz tajuz idatz zedin, halako literatura euskalki bat finka zedin, Xahoren hitzetan bereziki. Intxauspek ere helburu hori bera zuen 1858ko bere aditz taulen bilduma eraiki zuenean. Zuberotar haien ustean, dohain bereziak ditu Zuberoako euskarak. Xahok zioenez, euskalkietan zuberera da erregularrena eta perfektuena. Intxauspek ere antzera zioen: *zuberera da aldaera osoenak dituena, eta flexioa, berriz, soilena eta erregularrena du.* Ez da zertan adierazi Intxauspek 1858ko adizkitegi luze hartan dakarren egitura guztiz aberatsa eta txundigarria dela, ez dela zuberotar hiztun arruntek egunorozko jardunean darabiltenaren parekoa.

Euskarago zen sistema grafikora iragan zen xix. mendearen bigarren erdian: Intxauspek tradizioko grafia sistema frantsesari hurbil idazten zuen, ez zeritzon egoki tradizioko bidea uzteari, baina mende bukaerako *Almanak Uskara edo Ziberouko*

*Egunaria*-n, ia grafia guztia euskaldundurik zetorren, <ou> / <u> eta <ch> / <tch> salbu. *Eskualduna*-k ere sistema hori baliatzen zuen Constantin zaharraren idazkietan, baina *Gure Herria* aldizkarian gauzak aitzinatu ziren: <u> / <ü> bereizi zituzten xiberotarrek, frantses sistemaren oihartzun bakarra <ch> / <tch> zen.

**Irakurgai osagarriak**

Apraiz 1976, Gómez 2007, Irigarai 1956, Lafitte 1979 [1944], Laka 1987, Mitxelena 1977, Oyharçabal 2008, Pagola 2005, Reclus 1867, Zalbide 2003, 2007b, Zuazo 1988.

9.

# EUSKARA GARAIKIDEA. BATASUNAREN BIDE LUZEA

PELLO SALABURU

## SARRERA HISTORIKOA: 1968-2010

(MIKEL AIZPURU)

Euskal Herriak oso aldaketa sakonak bizi izan zituen garai honetan, eta berrikuntza nabarmenenak egoera politikoan gertatu baziren ere, gizarte-bizitzaren esparru guztietara zabaldu ziren. Bi gertaera garrantzitsuk eman zioten hasiera aldi honi: batetik, politikan, ETAren lehen ekintza odoltsuak eta, bestetik, kulturaren arloan, Euskaltzaindiak euskara batuaren oinarriak finkatzeko Arantzazun egindako batzarrak. Badira beste hiru bihurgune erabakigarri ere aro honetan: 1973. urtea, hots, nazioarteko krisi ekonomikoaren hasierako urtea; 1975. urtea, Franco diktadorearen heriotzarena, eta 1978. urtea, Espainiako Konstituzioa onartu zena. Lege horrek ateak ireki zizkien Arabako, Bizkaiko eta Gipuzkoako autonomia-estatutuari eta Nafarroako Foru-hobekuntza legeari. Euskal Herri berria sortu zuten sasoi horretan politikan, ekonomian, gizartean eta kulturan gertatutako eraberritzeek.

### 1. DEMOGRAFIA

| Urtea | Euskal Herria | Araba | Bizkaia | Gipuzkoa | Nafarroa Garaia | Lapurdi | Nafarroa Beherea | Zuberoa |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| **1970** | 2.565.377 | 206.995 | 1.043.875 | 631.003 | 464.867 | 166.920 | 32.360 | 19.357 |
| **1981** | 2.881.384 | 262.407 | 1.181.865 | 692.782 | 507.367 | 189.594 | 29.730 | 17.639 |
| **1991** | 2.884.358 | 277.653 | 1.156.671 | 676.307 | 523.563 | 204.604 | 29.031 | 16.529 |
| **2001** | 2.902.962 | 287.928 | 1.123.002 | 673.563 | 555.829 | 219.029 | 28.076 | 15.535 |
| **2010** | 3.107.921 | 317.130 | 1.154.041 | 706.890 | 636.038 | 246.758 | 31.423 | 15.641 |

Bilakaera demografikoari dagokionez, hiru garai desberdin ditugu: 1970eko hamarkada dugu lehena. Urte horietan aurreko joerak mantendu ziren: era nabarmenean egin zuen gora Hego Euskal Herriko eta Lapurdiko populazioak, eta motel jaitsi zen Baxenabarren eta Zuberoan. Egoera horren arrazoiak begi bistakoak dira; izan ere, 1973an hasi zen krisi ekonomikoa urte batzuk geroago heldu zen Euskal Herrira eta aurreko hamarkadako fenomeno berdintsuak gauzatu ziren. Hau da, mantendu egin zen immigrazioa, ahulago gertatzen bazen ere, eta, bestalde, bereziki altua zen jaiotze-tasa. Bi fenomeno horien ondorioz oso baxua zen biztanleriaren bataz besteko adina. Hurrengo bi hamarkadetan, aldiz, oso bestelako datuekin egiten dugu topo. 2001era arte Bizkaiak eta Gipuzkoak biztanleria galdu zuten krisi ekonomikoak industria tradizionaletan izandako eraginaren ondorioz, eta beste herrialde ertainek, ostera, gutxika-gutxika gorantz egiten zuten. Baina XXI. mendeko lehen hamarkadan, lurralde guztietan hazi zen biztanleria, batetik, industria berrien eta zerbitzuen inguruan sortutako garapen ekonomikoaren ondoriz eta, bestetik, etorkin berriak ugaldu zirelako. Lehen aldiz, hiru milioi lagun baino gehiago bizi ziren Euskal Herrian. Dena den, populazio horrek ezaugarri propioak zituen. Asko zahartu zen gizartea bi arrazoirengatik: azken hogeita bost urteetan emakumeen ugaltze-tasa erdira jaitsi zelako eta hurbildu zirenak baino gehiago izan zirelako bertatik alde egin zutenak. Azken urteetan aldatu zen joera. Beste ezaugarri nabarmen bat ere badago: hiri handietan eta kostaldean biltzea biztanleak. Begi bistako desorekak sortu ditu arrazoi horrek, eta euskal gizartearen berregituratze sakona bultzatu du.

## 2. HISTORIA POLITIKOA

1968. urtea une esanguratsua izan zen euskal historian; izan ere, garai horretan bizkortu eta lehertu ziren aurreko hamarkadatik gizarte-esparru desberdinetan gertatzen ari ziren hainbat prozesu. Arlo politikoan, ETAren lehen ekintza armatuak eta lehen heriotzak gertatu ziren. Espainiako gobernuak, Franco diktadorearen zuzendaritzapean, errepresio itsu eta gogorrarekin erantzun zion jarduera horri, eta zuzen edo zeharka euskal gizarte ia osoa jarri zuen jomugan. 1970. urteko Burgoseko epaiketa militarraren aurkako erreakzioak ondo erakutsi zuen egoera berria. Ordura arteko oposizio tradizionalari, EAJk, PSOEk eta PCEk ordezkatzen zutenari, oposizio berri bat gailendu zitzaion, ezker muturrekoa, zenbait kasutan marxismoaren korronte iraultzaileak eta abertzaletasuna uztartzen saiatu zena. Lan munduan gertatutako grebak eta protestak eta estatuaren errepresioari emandako erantzunak izan ziren oposizio berriaren indarraren erakusgarri.

Franco hil zenean, 1975. urtean, nortasun berri bat eraikitzen ari zen Hego Euskal Herria. Auzitan jarri ziren politika, kultura, erlijioa, gizarte-ereduak edota egoera ekologikoa,

besteak beste. Hori gutxi izan balitz, Euskal Herriko industria-eredua ere kolokan jarri zen 1975etik aurrera eta modu izugarrian egin zuen gora langabeziak, 1980tik aurrera bereziki. Euskal gizartearen sektore dinamiko ugarik irtenbide bakarra ikusten zuen, frankismoarekin erabat apurtzea. Baina, 1976an bertan hasi zen nabarmentzen Hego Euskal Herriko gizartearen gehiengoaren nahiak ez zuela bide hori babesten; izan ere, urte horretako abenduan Espainiako gobernu berriak erreferenduma deitu zuen erreforma politikoa onartzeko, eta alderdi demokratikoek abstenitzeko deia egin bazuten ere, Nafarroan erroldaren %73 gainditu zuten botoa eman zutenek, arabarren %76 hurbildu zen hautesontzietara eta gauza bera egin zuten bizkaitarren %54k. Gipuzkoa izan zen parte-hartzeak %45 gainditu ez zuen lurralde bakarra. Hala ere, beste irakurketa bat ere ahalbidetu zuten datu horiek: alde handia zegoen euskal probintzietako parte hartzearen eta Espainiako beste probintzietakoaren artean; oposizioaren indarraren adierazgarri zen, eta 1977ko hauteskundeetan islatu zen errealitate hori. Alderdi politiko guztiak legeztatuta egon ez arren eta erabateko amnistia eman gabe egon arren, talde gehienek erabaki zuten lehian parte hartzea. PSOE izan zen Hego Euskal Herriko alderdirik bozkatuena. Bi hilabete geroago, lau herrialdeetako legebiltzarkide gehienak Gernikako Batzar Etxean bildu ziren: amnistia, alderdi guztiak legeztatzea, euskararen ofizialtasuna eta autonomia aldarrikatzeko. Urrian atera zen azkeneko preso politikoa, baina ETAren bi adarrek borroka armatuarekin jarraitzea hautatu zuten. Erabaki horrek jite berezi eta samingarria eman dio azkeneko berrogei urteetako euskal historiari. Bi bide markatu ziren: batetik, apurketaren aldeko apustua egiten zuena, 1978tik aurrera Herri Batasuna koalizioan bildu zena, ETA (militarrari) babesa emanez, eta, bestetik, bide instituzionalaren aldeko apustua egiten zuten alderdi gehienen bidea. Hurrengo puntuan jorratuko dugu ibilbide instituzionala, eta ondorengo lerroetan garai horren ezaugarri politiko garrantzitsuenak azaltzen saiatuko gara. Elkarren arteko lotura estua zuten hiru faktorek markatu zuten aro hau: hauteskundeetako emaitzak eta alderdien arteko harremanak, borroka armatuaren nondik norakoak eta Espainiaren eta Euskal Herriaren arteko harremanak.

1978az geroztik garbi geratu zen Arabak, Bizkaiak eta Gipuzkoak bide bateratua jarraituko zutela eta Nafarroak berea. Euskal Autonomia Erkidegoa osatu zuten aurreneko hiru lurraldeek, eta hasierako urteetan Eusko Alderdi Jeltzaleak erraz irabazi zituen lehiak. Erakunde gehienetan parterik ez hartzea erabaki zuen Herri Batasunak. Karlos Garaikoetxea izan zen lehenengo lehendakaria, baina 1984tik aurrera alderdi barruko tentsioek ozpindu egin zuten jeltzaleen arteko harremana, eta 1986an alderdi berri bat sortu zen, Eusko Alkartasuna. Zatiketak lankide beharrean utzi zuen EAJ eta 1998ra arte alderdi sozialista izan zuen bidelagun garrantzitsuena. Hasierako urteetan, EAEn, abertzaleen nagusitasuna oso nabarmena izan bazen ere (botoen %70 inguru biltzen zuten alderdi horiek), pixkanaka-pixkanaka berdintzen hasi ziren proportzioak.

Indarkeriaren bilakaerak zerikusi zuzena izan zuen horretan. Oso urte nahasiak izan ziren 1977tik 1989ra bitartekoak. Sistema demokratikoaren oinarriak jartzen ari zirela gertatu ziren ETAren bi adarren eta *Comandos Autónomos Anticapitalistas* direlakoen erasorik gogorrenak (ia 250 hildako 1978tik 1980ra bitartean). Horrez gainera, poliziaren gehiegikeriek eta eskuin muturreko kideek beste ehun hildako inguru utzi zituzten Euskal Herriko kale eta bazterretan. 1983an, Espainiako Gobernuko Barne Sailaren elementuek GAL taldea sortu zuen, Ipar Euskal Herrian bizi ziren ETAko kideak hiltzeko asmoz. Giro horretan, Garaikoetxea lehendakariak Bake-Mahaia osatzeko egindako ahaleginak ez zuen arrakastarik izan. Gauza bera gertatu zen 1988an Aljerian ETAren eta Espainiako gobernuaren arteko elkarrizketekin. Urte horren hasieran osatu zen Ajuria Eneko mahaia, alderdi politiko demokratikoen indarkeriaren aurkako jarrera bateratua bultzatzeko. Ajuria Eneko itunaren ondorioz ezker abertzalea zokoratu zen, eta ETAren estrategia berriak indartu egin zuen bazterketa hori, negoziazioa lortze aldera, alderdi politikoen ordezkarien aurka (PPko eta PSOEkoen aurka bereziki) zuzendutako erasoetan oinarritu baitzen. Miguel Angel Blancoren heriotza izan zen garai horren gailurra, 1997an. Ekintza horrek eta, zenbait kasutan, ETAren aurkako borroka euskal abertzaletasuna menperatzeko borrokarekin lotzeak abertzale eta konstituzionalisten arteko urruntzea ekarri zuten. Hurrengo urtean alderdi eta erakunde abertzale ugarik Lizarra-Garaziko Ituna sinatu zuten, erabakitzeko eskubidearen inguruan. Hitzarmen horrek eta Ibarretxe lehendakariaren proposamenak handitu egin zituzten abertzaleen eta konstituziozaleen arteko tentsioak. Ezker Abertzalea legez kanpo utzi ondoren, Patxi López sozialista aukeratu zuen lehendakari Eusko Legebiltzarrak 2009an. Poliziaren presioak, bortxakeriaren aurkako gizarte-jarrerak eta ordura arteko estrategiaren porrotak ETAren menia ekarri zuten 2010eko irailean. Hurrengo urteko udal hauteskundeetan Bildu koalizioa (ezker abertzaleko independenteak, EA eta Alternatiba alderdiak batuta) aurkeztu zen, eta EAEko bigarren indarra bihurtu zen jeltzaleen atzetik. Handik gutxira, urriaren 20an, ETAk bere ekintza armatuen behin betiko amaiera iragarri zuen.

Nafarroako bilakaerak zer ikusi gutxi izan du EAEkoarekin, indar abertzaleek ez dutelako inoiz botoen % 30 gainditu eta Alderdi Sozialista eta Unión del Pueblo Navarro izan direlako hango indar nagusiak. Aurreneko urteetan UCDren eskuetan egon zen Diputazioa, baina Foru Hobekuntza onartu ondoren, sozialistena izan zen alderdirik bozkatuena eta Gabriel Urralburu izan zen Nafarroako gobernuko buru 1984tik 1991ra bitartean. Bertako lehendakariak egindako ustelkeria-ekintzek eta eskuineko indarrak berrantolatzeak UPNri eman zioten gobernuaren zuzendaritza 1991tik aurrera, 1995-1996 tartean salbu, PSN, EA eta CDN alderdien arteko koalizio-gobernua aritu baitzen orduan. Miguel Sanz (UPN) izan zen Nafarroako Gobernuko lehendakaria 1996tik 2011ra bitartean eta euskal abertzaletasunaren aurkako grina izan zen bere jardueraren

erreferentzietako bat. Azkeneko urte hauetan hiru aldaketa garrantzitsu gertatu dira: UPNren eta PPren arteko harremanak apurtzea 2008an, indarkeria baztertzen zuten abertzaleak, euskaltzaleak eta ezkertiarrak uztarturik Nafarroa Bai koalizioa osatzea 2003an eta Bildu koalizioaren presentzia 2011n. Hauteskunde horien osteko gobernua UPNk eta PSNk osatu dute, Yolanda Barcinaren zuzendaritzapean.

Hegoaldean bilakaera hori garatzen zen bitartean, Frantziako politikaren nondik norakoak ziren nagusi Ipar Euskal Herrian. Eskuineko indarrek (gaullistek eta kristau-demokratek) gehiengoari eutsi arren, erabateko nagusitasuna galdu zuten emeki-emeki eta sozialistek oihartzun handiagoa izan zuten, bereziki hexagonoan lehen indarra izan ziren garaietan. Hala, 1981ean Jean Pierre Destrade sozialistaren eskuetara pasa zen kostaldeko aulkia; barnealdekoa, aldiz, Intxauspe gaullistak kontrolatzen zuen. Dena dela, harrezkero eskuinak eskuratu ditu hiru barrutiak. 1997an Nicole Péry sozialista aukeratzea izan zen salbuespen bakarra. Mugimendu abertzalea txikia zen 1970etik 1990era bitartean eta oso zatituta zegoen, indarkeria politikoaren eta Hegoaldeko estrategia politikoen eraginaren ondorioz bereziki. Iparretarrak talde armatuaren ekintzek (1973-2000) eragotzi egin zuten abertzaleen lan bateratua. 1990eko hamarkadatik aurrera indartu egin ziren abertzaleen arteko loturak: Abertzaleen Batasuna bilakatu zen erreferentzia garrantzitsuena eta talde guztien artean abertzaletasunak botoen % 10 inguru bildu du. Hautetsi ugari ditu barnealdeko zenbait gunetan eta erreferentzialtasun politiko berri bat lortu du, lehenagotik kulturaren esparruan eta ekonomian (kooperatibismoan) zuena zabaldu ondoren.

## 3. HISTORIA INSTITUZIONALA

Hego Euskal Herriari dagokionez, bi dira garai horretako ezaugarri garrantzitsuenak. Alde batetik, frankismoko estatu-eredua eraldatzea. Bestetik, Nafarroaren eta beste hiru lurraldeen arteko tartea handitzea, egitura politiko-instituzional berriak eraikitzeko orduan.

Frankismoaren azkeneko urteetan, gero eta nabariagoak ziren gerraostean Francok sortutako eredu politikoaren mugak. Hainbat udalek, aldundiek eta legebiltzarkide batzuek behin baino gehiagotan eskatu zieten Madrileko agintariei era batera edo bestera Euskal Herriko berezitasunak onar zitzatela. Foruak berrezartzea eskatu zuen Bergarako alkateen mugimendua izan zen 1976an ahalegin horien azken adibidea. Foruek edo eskubide historikoek pisu garrantzitsua izan zuten 1978an Espainiako konstituzio berria eztabaidatu zenean, eta nolabait onesteak oinarri juridikoa eman zien hurrengo urtean Araba, Gipuzkoa eta Bizkaia elkartuko zituen autonomia-estatutuan azaltzen

ziren hainbat eskumeni, ogasun autonomiari bereziki. Nafarroako kasuan, 1982an Foru Hobekuntzaren Legea eztabaidatu zenean, hango ordezkariak iragan historikoari lotu zitzaizkion prozedura konstituzionalei uko eginda onar zedin egitura politikoen berrikuntza. EAEko kasuan 1979ko urriaren 25ean herritarren % 60k eman zion baiezkoa autonomia-estatutuari. Nafarroan, aldiz, 1841eko legearen erreformatzat aurkeztu zen foru hobekuntza. Euskal herritar askok aspalditik eskatzen zuten autonomia ahalbidetu zuten lege horiek, zenbait sektorerentzat mugatuegiak izan arren.

Euskal herritarren borondateak eta 1978/79 legeek egitura instituzional zaharberritua eta konplexua sortu zuten. EAEn udalek, foru aldundiek eta Eusko Jaurlaritzak partekatzen zituzten estatutuak onartzen zituen eskumenak. Eskubide historikoen erreferentziak aldundi indartsuak sortzea ahalbidetu zuen, horiena baitzen zergak biltzeko ardura, nahiz eta bildutako diruaren zati handi bat udalei, eta bereziki, Jaurlaritzari eta Espainiako Gobernuari eman gero. Lurralde Historikoen Legeak arautu arren eskumenen banaketa, zenbait tentsio sortu ditu erakunde horien guztien aldiberekotasunak eta, neurri batean, EAJren zatiketaren atzean ere egon zen. Autonomia estatutuak eskumen zabalak aitortu zizkion EAEri, hezkuntzan, kulturan, ordena publikoan, osasungintzan, sustatze ekonomikoan eta ongizate-politiketan, besteak beste; baina, hasierako transferentzien ondoren (1980-1982 eta 1985/1987) geldiune luzea izan zuen eskumenen aldaketak, eta estatutua onartu zela hogeita hamar urte pasa ondoren, hainbat eskumen zeuden oraindik Jaurlaritzara heldu gabe, eskualdatzea Espainiako gobernuaren borondate politikoaren arabera egin baita.

Bestalde, 1982an onartu zen Nafarroako Foru Hobekuntza. Lege aldaketak hainbat berrikuntza ekarri zuen eskumenei zegokienez (lurralde-antolamendua, hirigintza eta etxebizitza, merkataritza, ongizatea eta osasungintza, industria, nekazaritza, lana…) eta egitura administratibo berria sortu zuen: gobernua aldundiaren ordez eta legebiltzarra nafarren ordezkarien bilgune moduan. Euskal abertzaletasunaren ahuleziak eta bi indar politiko nagusiak (UPNk eta PSNk) Espainiako egitura politiko-juridikoak auzitan ez jartzeak marko egonkorragoa sortu zuten Nafarroan.

Unean uneko harreman mugatuak gertatu dira EAEren eta Nafarroako Foru Erkidegoaren artean. 1978ko konstituzioak bi erkidegoak batzeko aukera ezarri zuen hiru baldintza betez gero: Nafarroako legebiltzarrak eskatzea, nafarrek erreferendumean onartzea eta beste estatutu bat adostu ondoren bigarren erreferendum batek baiezkoa ematea. Bistan denez, ez da garatu aukera hori, ezta Espainiako legediak onartzen dituen lankidetza-hitzarmenen bidea ere. Salbuespen garrantzitsuena 1992. urtean gertatu zen; izan ere, urte horretan Nafarroak bat egin zuen EAErekin eta Akitaniako eskualdearekin mugaz gaineko garapena bultzatzeko.

Iparraldean, beste behin, oso bestelakoa da errealitatea. Hiru lurralde horiek ez dute lortu onarpen instituzionalik Frantziako errepublikaren baitan. Abertzaleen

eskakizunek (independentzia izan, autonomia izan, departamendu propioa sortzea izan) ez zuten jaso ez bertako hautetsien babesik, ezta Pariseko agintariena ere. Mitterrand presidenteak, 1981eko hauteskunde-programan agindutako departamendua baztertu ondoren, hainbat proposamen bultzatzen saiatu zen, Frantziako deszentralizazio-prozesuaren baitan, baina ezerezean geratu ziren. 1994ra arte itxaron behar da zenbait aldaketa ikusteko. Egitura administratiboetan eta euskal gizartean emandako eraldaketei esker, urte horretan sortu ziren Garapen Kontseilua eta hurrengoan Euskal Herriko Hautetsien Biltzarra, herrialdeak bizi zuen atzerapenari eta moteltzeari irtenbide adostua bilatu nahian. 1997an, aldiz, *pays* egitura aitortu zitzaion Ipar Euskal Herriko 157 udalerrien batasunari. Erakunde horiek hiritarren parte hartzea ahalbidetu zuten eta departamenduaren aldeko kanpaina berriak bultzatzea erraztu zuten. Kanpainarik garrantzitsuena Batera mugimenduaren inguruan gorpuztu zen, 2002. urtetik aurrera, baina, inoizko mobilizazio handiena lortu arren, agintarien ezezkoa jaso zuen berriro eskaerak. Azken horiek eskainitako alternatibek ez dituzte kolokan jartzen Pirinio Atlantikoak departamenduaren mugak, baina egindako ibilbidearen ondorioz Frantziako buruzagiek Euskal Herriaren nolabaiteko aitortza onartu beharra izan dute.

## 4. HISTORIA KULTURALA ETA IDEOLOGIA

Hiru garai bereiz daitezke aro honetako bilakaera kulturala aztertzeko orduan, nahiz eta ez egon kasu guztietan muga nabarmenik: frankismoaren azken urteek hartzen dute lehenengoa, trantsizioak eta laurogeiko hamarkadako lehenengo urteek bigarrena eta bi mendeen arteko aroak hirugarrena. *Telebista* eta *pizkunde* hitzek definitzen dute aurrenekoa era kontrajarrian. Francoren erregimenaren udazkenean hedatu zen telebista Espainian, pixka bat lehenago Frantzian. Gizarte-klase eta esparru guztietara heltzeko izugarrizko gaitasuna erakutsi zuen komunikabide berriak. Gaztelania eta frantsesa ziren bertan erabiltzen ziren hizkuntza bakarrak, eta are gehiago bizkortu zuten euskararen atzerakada eta homogeneotze kulturala. Testuinguru horretan, Euskal Herria gehiago zen kultura horren hartzailea, sortzailea baino. Bestalde, arindu egin ziren aurreko hamarkadetako kontrolak; horren ondorioz ideia eta proposamen ugari plazaratu ziren eta horietako askok eta askok kolokan jartzen zituzten frankismoak eta eliza katolikoak defendatutako balioak.

Trantsizioko urteetan prozesu biak areagotu ziren, baina garai hori izendatzeko hitz bat aukeratu beharko bagenu, eztabaida izango litzateke. Euskal nortasuna zeren arabera definitu behar zen (hizkuntzaren, lurraldetasunaren, klase-izaeraren edota borondatearen arabera) bilakatu zen urte horietako diskurtso askotako gune nagusi.

Historiak, sinboloek eta politikak baldintzatu zuten kultura-sormena, eta krisitik ateratzen eta krisian bizi zen gizartearen ispilu izan zen. Beste alde batetik, trantsizioak frankismoan debekatutako edo zokoratutako bitartekoen berragerpena ahalbidetu zuen: prentsa abertzalea *(Deia* eta *Egin* egunkariak 1977an), Eusko Ikaskuntza elkartea berriz sortzea urte berean edo Euskal Herriko Unibertsitatea osatzea 1980an. 1980tik aurrera, erakunde autonomikoak sortzeak azpiegitura berriak ekarri zituen: Euskal Irrati Telebista izan zen garrantzitsuena, kultur etxe eta liburutegiekin batera. Eraldaketa garaia izan zen eta proposamen berritzaile eta apurtzaile ugari plazaratu ziren urte haietan; gaztetxeak eta musika gogorra indartzea izan ziren sasoi hartako ikurrik garrantzitsuenak. Hala ere, kultura-sarearen instituzionalizazioa gailendu zen.

Garai berri bati eman zion hasiera1990eko hamarkadak, globalizazioaren garaiari, hain zuzen. Prozesu kontrajarriak bizi dira harrezkero. Aurreko gehiegizko politizazioaren ordez, sormen askeagoa zabaldu zen, eta aurreko garaietan ikusten ez ziren fenomenoak ikus zitezkeen oraingoan, gaztelaniaz pop musika abesten zuten taldeen presentzia, esate baterako. Dena den, desoreka ugari aurki daitezke arlo askotan. Egoera horrek kulturaren kontsumoarekiko menpekotasuna adierazten du, bai nazioarteko guneen menpe (musikan eta zineman adibidez), bai estatuetako guneen menpe (literaturan eta arte eszenikoetan esate baterako) garatzeko arriskua. Guggenheim Bilbao museoaren sorrera (1997an) izan daiteke erreferentzia garrantzitsuena. Errealitate horren ondoan, beste datu batzuek, aldiz, euskal kulturaren garapena adierazi zuten: Bernardo Atxaga idazleak Espainiako Sari Nazionala jaso zuen 1989an eta *Euskaldunon Egunkaria* sortu zen hurrengo urtean (euskara hutsean argitaratu zen lehen egunkaria 1937az geroztik). Azkeneko urteetan Interneten inguruan sortutako eduki eta bitartekoek hartu duten garrantziak aukera eta arrisku berriak adierazten dizkigu.

## 5. EUSKARAREN EGOERA

1968an hasi zen garaiak, aurrekoak ez bezala, euskararen inguruko datu estatistikoak ezagutzeko aukera ematen digu. 1973an Pedro Yrizarrek argitaratutako lanean 610.000 euskaldun zenbatu zituen, horietatik 533.000 Euskal Herrian bizi ziren, biztanleriaren % 20 inguru, eta besteak munduan barna. Euskaldunen ia erdia Gipuzkoan bizi zen. Kontuan izanik 1866an euskaldunen kopuru osoa apur bat baxuagoa zela, baina biztanleriaren % 52 osatzen zuela, erabat agerian geratzen da euskarak mende horretan bizitako atzerakada. Esan dugunez, frankismoan are gehiago bizkortu zen prozesu hori, baina, era berean, oinarriak jarri ziren atzeranzko prozesua moteltzeko, eteteko edo, kasurik onenean, berreskuratu ahal izateko.

Francoren azkeneko urteetan eta trantsizioko urteetan, inoizko girorik indartsuena bizi izan zen Euskal Herrian euskararen alde. Horri esker, hurrengo hamarkadan, 1980koan, Eusko Legebiltzarrak hainbat aldaketa juridiko egin zituen euskararen ofizialtasuna bermatzeko EAEn (1982ko Euskararen Legea), eta erakunde publikoek baliabide ugari jarri zituzten euskarak galdutako eremuak berreskuratzeko eta berriak eskura jartzeko. Ordura arte gizarte zibilaren esku egondako hainbat esparruk erakunde publikoen laguntza jaso zuten edota berariaz sortutako erakundeek ordezkatu edo osatu zituzten lehenagokoak, zenbait kasutan zalaparta eta eztabaida askoren artean, berreuskalduntzearen esparruan esate baterako. Irrati eta telebista euskaldun eta publikoak sortzeaz gain, eskola-sarea elebidun bilakatu zen, eta gurasoen esku geratu zen eredua aukeratzea. Antzekoa izan zen prozesua Nafarroan, baina alde handia ere izan zuen. Izan ere, hango Euskararen Legeak (1986) ez zuen euskara ofizialtzat hartzen herrialde osoan, ezta ezagutza eskatzen administrazioko hainbat arlotan aritzeko. Ipar Euskal Herrian euskarak gaur arte ez du izan inongo ezagutza ofizialik, nahiz eta azkeneko urteetan hainbat laguntza bideratu irakaskuntzan eta komunikabideetan euskararen presentzia indartzeko.

Herritarren borondateak eta erakunde publikoen esku hartzeak ondorio nabarmenak izan ditu euskaldunen kopuruan, azken 20 urteetan egindako ikerketa soziolinguistikoen arabera:

Hizkuntza-gaitasunaren bilakaera.
16 urte edo gehiagoko biztanleria euskalduna ehunekotan

| | 1991 | 1996 | 2001 | 2006 |
|---|---|---|---|---|
| Araba | 7 | 11,4 | 13,4 | 14,2 |
| Bizkaia | 16,5 | 20,9 | 22,4 | 23 |
| Gipuzkoa | 43,7 | 46 | 48 | 49,1 |
| Nafarroa Garaia | 9,5 | 9,6 | 10,3 | 11,1 |
| Ipar Euskal Herria | 23,3 | 26,4 | 24,8 | 22,5 |

Dena den, neurketa horiek beste errealitate bat ere erakutsi dute, ezagutza igo arren, erabilera murriztu egin dela, euskaldun berri askoren lehen hizkuntza gaztelania delako, gune erdaldunetan bizi direlako eta euskaraz jarduteko erraztasun urriagoa dutelako. Egoera horrek, globalizazioaren garaiak ekarri dituen biztanleriaren mugimenduek eta komunikabide-sareek erronka berriak jarri dituzte euskararen iraupenerako.

## BATASUNAREN BIDE LUZEA (1968-2010)

Pello Salaburu

Hizkuntzen batasun idatzia egitea ez da bide laburra izaten, betiere jauzi handia gertatzen baita hizkuntza mintzatutik hizkuntza idatzira pasatzen garen aldi oro. Jauzi horren zenbatekoa handiagoa izaten da, gainera, delako hizkuntza horrek ez baldin badu behar bezala garatu hizkera landuaren erregistrorik. Ez dugu berdin hitz egiten etxean garenean, tabernan gure adiskideekin, edo jende aurrean mintzatu behar dugunean, esaterako: erregistro desberdinak erabiltzen ditugu, anitzetan horren kontzientzia argirik ez badugu ere. Hemen kontatu nahi dut euskararekin gertatu dena, oso aukera gutxi baitaude munduan holako prozesuetan protagonista zuzena izateko: batzuetan erabakiak hartzeko orduan eragina izanez; beste batzuetan hartu erabaki horiek aplikatzeko beharra izanez; beste batzuetan gertatzen den hori bazterretik ikusiz, eta abar. Nolanahi ere, prozesuaren hasieraren eta —neurri handi batean— prozesuaren amaieraren lekukoa izanez. Hori aukera handia da, batere arrunta ez dena. Eta horren lekuko izan gara anitz euskaldun. Euskararen estandarizazioak badu beste ezaugarri azpimarragarri bat ere: arrakasta izugarria izan du erabiltzaileen artean. Urteak pasatu ondoren, burua itzultzen badugu eta egindakoari behatu, mirari baten aitzinean gaudela ematen du, edo, miraria ez bada, haren antza duen zerbaiten parean. Hori guztia belaunaldi baten lan eredugarria izan da. Hona hemen horren guztiaren historia.

### 1. HIZKUNTZAREN EREDU IDATZIA ETA BATASUNA

Hizkuntza landua erabiltzeak berarekin dakar, ezinbestean, hizkuntza idatziaren beharra, eta alderantziz ere ber gauza gertatzen da. Zernahi gisaz, bi fenomeno horiek elkarrekin loturik daude, eta batak bestea eskatzen du: hizkera landuak eredu idatzi argia nahi du bere ondoan, eta eredu idatziak, aldi berean, hizkera landua eskatzen du bere altzoan. Arruntean, edo anitzetan segurik, aipatu bi kide horiek, tradizio gehiegi ez badute bat eginik lanean aritzeko, oso eroso sentitzen dira hirugarren batekin elkartzen direlarik: borondate politikoa, aukeratu eredu hori modu batera edo bestera bulkatzeko. Ahalegin hori agerian egiten da batzuetan (lege edo araudi ofizial bat onartuz, adibidez), edo ez hain agerian, baina bai oso modu eraginkorrean, nolanahi ere: aski da itzala duen luma zorrotzeko zuzentzaile bat jartzea izena duen argitaletxe batean. Eta, gainera, ahalegin hori nabarmenago gertatzen da, indartsuago, bultzatu nahi den kontua ez bada hizkuntza moldea bultzatzera mugatzen, baizik hizkuntza bera, inguruko hizkuntzen gainetik, inposatzera. Esan nahi baita, holako egoerak baliatzen

direla maizkara ukimenean dauden hizkuntzen artean, hizkuntza ofiziala arautu behar delakoaren aitzakian, hizkuntza horri lehentasuna emateko, eta ondoko hizkuntza bigarren mailan uzteko. Dena den, prozesu horiek guztiak aski mantso gertatzen dira arruntean, beti luzera begira.

Horrela, egia baldin bada ere munduan anitz hizkuntza badela oraindik batasunik egin ez duena —tradizio idatzirik ez dutenak gehienetan—egia da ere hizkuntza «handi» guztiek hartu dituztela beren batasun bideak historian zehar, eta pixkanaka-pixkanaka joan direla hurbiltzen, ia ohartu gabe askotan, gaur egun hizkuntza horietan nagusiki erabiltzen diren eredu idatzietara. Ez handiek bakarrik: hizkuntza guztiek, azken batean, idaztearen beharra sentitu dutenetik. Prozesu hori luzea izaten da, ez da sigi-sagarik gabe egiten, ez da zuzena baizik ezarian-ezarian gertatzen da, eta historian pisu handia izan du zeregin horretan literaturak, batez ere gizarte bat liburuak inprimatzeko eta hedatzeko gai izan denetik: Cervantes bat agertu denean, eta arrakasta izan duen neurrian, batasuna eman dio hizkuntzari etengabe. Zer ez dugu esango, adibidez, Shakespeare bati buruz, erdiz erdi moldatu baitzuen haren eraginak ingeles klasikoaren eredua, eredu modernoari bide egiteko neurri handi batean. Nebrijak idatzi zuen 1492an gaztelaniaren lehen gramatika, eta XVI. mendearen amaieratik hasi eta XVIII. mendea aski aitzinatua zen arte, hainbeste idazle paregabe izan zituen gaztelaniak. Horrek eman zion batasun handia hizkuntzari, nahiz 1713an Real Academia Española (RAE) sortu zenetik batasun horrek bedeinkazio ofizialak ere izan zituen, eredu gisa idazleek erabil zezaten. Frantzian, Frantzisko I.ak aldarrikatu zuen, Villers-Cotterêtseko araudiaren arabera, frantsesa zela hizkuntza ofizial bakarra. Ez, ordea, edozein tokitakoa, baizik Île de France eskualdean mintzo zen aldaera hartu zen eredu. Eta ondoren Pléyade gisa ezagutzen den idazle eta olerkari multzoak zedarritu zituen hizkuntzaren eredu horren ezaugarriak. Baina kasu horietan guztietan mendeetako lana eskatu izan du hizkuntzaren eredua finkatzeak.

Gatozen orain gurera. Euskaraz idazten hasi zen unetik beretik izan da kezka nagusia hizkuntza idatzi horrek zer nolako berezitasunak izan behar zituen zehaztea. Edo, horrela argi eta garbi esaten ez bazen ere, idazleek beren kezka erakutsian uzten zuten, aise konturatzen baitziren aukera bat baino gehiago zutela eskura, eta hautua egin bezain laster hiztun batzuk haiek idatzitakoa erraz ulertzeko moduan zirela, baina beste batzuentzat ulertze zailtasunak sortzen zirela aldi berean, hauek arrotz sentitzen baitzuten egin hautua. Leizarragak aipatzen zuen arazoa bere Testamentu Berriaren itzulpena (1571) moldatu zuenean. Urteak geroago argitaratu zen Axularren *Gero* (1643) lan ezaguna, eta han ere aipatzen du arazoa, adieraziz ezin ziela Euskal Herriko hizkera mota guztiei erantzuna eman, desberdintasun handiak zeudelako toki batetik bestera. Handik urte batzuetara (1657) testu batean paratu zituen Oihenartek euskal atsotitzak eta neurtitzak, eta berriz ere oroitarazten dio arazoa irakurleari. Erabiltzen duen hiztegia

azaltzeko beharra ere ikusten du. Eta ber gauza errepikatu da geroago ia etengabe beste idazle askorekin, Larramendirekin, kasuko.

xx. mendean ekingo zaio berriz ere indarrez gai berari: batasun eredu baten aldekoak eta aurkakoak bortizki uzten zituzten agerian beren iritziak eztabaida publikoetan. Anitzek uste zuten hizkuntza laborategi batean eskubesta zitekeela, hizkuntzaren eredu mintzatua liburu batzuekin edo arau batzuekin alda daitekeela, hiztunak hartara automatikoki lerratuz, baina hiztunek berez egiten dutena sobera kontuan izan gabe. Ideia hori berriz ere bururatu zaio berriki baten bati mende horren bukaeran ere. Egia esateko, Euskal Herriaren zatiketa administratiboak (bi estatu desberdin, eta estatu bakoitzaren barnean beste probintzia batzuk), ez zuen batere laguntzen eredu estandarra bultzatzeko orduan. Ondorioz, aski desberdinak ziren iritziak jartzen ziren mahai gainean: batzuen ustez, komenigarria zen hizkuntza bere jatorrizko garbitasunera eramatea; beste batzuk tematzen ziren hizkuntzatik kendu behar zirela euskarak alboko hizkuntzetatik mailegatutako hitzak; errealistagoak zirenek euskalkiren bat oinarri gisa hartzea proposatzen zuten, funtsean bizkaiera edo gipuzkera, eta beste zerbaitekin osatzea proposatzen zuten, eta abar. Nazionalismoak hartu zuen indarrak, eta euskal kulturaren inguruan sortutako elkarteek hartu zuten bultzadak (batez ere Eusko Ikaskuntzaren sorrerak) egin zuten posible 1918an Euskaltzaindiaren sorrera, Espainian eta Frantzian aspalditik lanean ari ziren hizkuntza Akademien antzera. Euskaltzaindiaren barnean bideratuko ziren geroztik hizkuntzaren inguruko eztabaidak. Euskaltzaindia, zertako? Ortografia arautzeko, euskal hiztegia eratzeko eta euskararen batasuna zehazteko: «euskalgi oroen odolez azitako euskal-eredu bat» eratzeko, zioen arautegiko 6. artikuluak.

Batasunaren kontuak ez zegozkion bakarrik hiztegiari, lexikoari. Ez ziren horiek, gainera, garrantzizkoenak, eredu falta horrek beste hainbeste maila ukitzen baitzituen. Baziren arazo ortografikoak: esaterako, egunero hiztun baten ahotik ateratzen zen «etxe» bezalako hitza, Iparraldekoa edo Hegoaldekoa zen idazlea, ez zen modu batera bakarrik idazten: «etche» edo «eche». Berdin gertatzen zen «ethorri» eta «etorri»-rekin, edo «hau» eta «au» erakusleekin, adibide xume batzuk jartzearren. Oinarrizko kontuez ari gara, ikusten denez. Jakina da morfologia mailan dauden aldaketa handiak: aski dugu aditzaren paradigma berari erantzuten dioten «zaio»/«jako» erkatzea, edo «dio» eta «deutsa» parean jartzea, adibide aski sinpleak horiek ere. Edo kasuen kontuekin gertatzen dena: «ameagaz» vs «amarekin». Horrek sortzen zituen aldaera handiak hizkuntza idatzian: Bonapartek egiten zituen itzulpenen argitalpenetan ikusten da hori aski garbi. «Egipto» bezalako hitz arrunt batek hogei bat modu desberdin izan ditu euskara idatzian (*Ejiptu, Ejipto, Egipto, Ijito, Aijito, Aigito, Egypto*…), Gidor Bilbaok (1994: 1.397) erakutsi duen gisan. Aditz laguntzaile desberdinak, erakusleak, ortografia, morfologia kontuak… dena nahasten zen, eta euskaldun hiztuna berehala ohartzen zen aldameneko herrian ez zirela

bera bezala mintzo. Batasuna ezinbestekoa zen. Baina nondik hasi? Nondik hasi, egunero erabiltzen zuten hizkuntzari izen bakarra emateko ere ez baziren gai?: *euskara, euskera, eskuara, eskara, euskala, eskuera, eskara, eskera, eskoara, euskiera, uskara, oskara, uskera, uskaa, uska* edo *uxka* hitzekin deitu izan dugu euskaldunok gure hizkuntza. Nondik hasi, hori hain ilun izanik, aldi berean aski arruntak ziren, eta hain tradizio luzea zuten, «arima» edo «eliza», eta berehala «telefono» bezalako hitzak, gure lexikotik, arrotzetik zetozelakoan, baztertu nahi bagenituen?[1] Nondik hasi gauzak bideratzen, *mendía, mendíe, méndie, mendíxa* edo *mendíxe* bezalako formen artean aukera egin behar zelarik?

Euskaltzaindia sortu eta ez ziren urte sobera pasatu lehenik Primo de Riveraren diktadura, gero Errepublika nahasia, eta azkenean Espainiako gerra zibila lehertu zen arte. Francorekin iluntasun sakona etorri zen: belaunaldi oso bat isil-isil gelditu zen, hartara behartua, edo hilerrietako pareten kontra fusilatua. Gerra ondoan, 1946an, Sebero Altubek egin zuen berriz ere, lehenago Azkuek berak egin zuen gisan, gipuzkeraren alde, gipuzkera izan zitekeelakoan denok beharrezkoa zuten hizkuntza ereduaren oinarri sendoa: «Euskalkirik erabiliena aukeratu behar da». Eta inguruko euskalkien ñabardurekin osatu. Baina ez zuen arrakastarik izan: gipuzkeraz idazten zuten batzuk ere kontra agertu zitzaizkion.

Berehala Federico Krutwigek hartu zion txanda: honen ustez, lapurtera klasikoa hartu behar zen oinarri gisa. Gutxienez, iritzi horrek ordura arteko eztabaida antzuaren mugak hausteko balio izan zuen. Eztabaida ez zen mugatzen gipuzkeraren eta bizkaieraren arteko hautua egitera: batetik, mahai gainean jartzen zuen historian euskarak izana zuen eredurik arrakastatsuena (Axularren *Gero* paregabean ageri den eredua); baina, bestetik, eredu hori ez zen erabiltzen, eguneroko hizkeratik desagertua zen. Egia da Krutwigen inguruan kemen handiko jendea bildu zela, baina apustua hasieratik zegoen galdua: ez da kontua lapurtera klasiko desagertua zela. Ez hori bakarrik: kontua zen lapurtera modernoa ere ez zuela jende gehiegik erabiltzen, alde hartan biltzen zen euskaldun kopurua beste eskualdeekin erkaturik aski apala baitzen. Baina bazuen, hala ere, alde bat oso ona: begiak literatura klasikoan jartzen zituen, tradizioan, eta eredu hori Euskal Herri osorako nahi zuen. Gainera, Krutwig beti ibili zen arduratua euskara hizkuntza moderno bihurtzeko, euskara kultura hizkuntza egiteko, azken batean.

Urte horietan idatzi zuen Pierre Lafittek ere bere gramatika ezaguna, 1944an, nafar-lapurteraren nolabaiteko idealizazioa eginez. Eta, praktikan, espresuki hartarako ez bazen ere, beste eredu bat jarriz mahai gainean. Eta guztien artean ez zen falta izan Ipar

---

1. «Si adoptamos el guipuzcoano, como quiere usted, siempre será el euzkera un idioma imperfectísimo, y lo que es más todavía, imperfectible. Las deformaciones que hoy la afean subsistirán en tiempos sucesivos…», zioen Soloetak (1916: 471).

Ameriketako euskaldunek garatutako eredua onartzea proposatzen zuenik, egia baitzen han Baigorriko norbait eta Markinako beste lagunen bat elkartzen zirenean, ezinbestean, beste hizkuntza komunik ez izaki, euskaraz konpondu behar zutela elkarren artean. Bibiak «jaieskulera» bidaltzen zituzten haien seme-alabak Oregonen edo Arizonan, hau da, ez jaia egiten zen eskola batera, baizik institutu batera: «high school» batera.[2] Eredu horrek ere ez zuen arrakastarik izan batasuna bultzatu nahi zutenen artean.

Baina gauza batekin eta bestearekin, eztabaidak goiti-beheiti, oinarriak jarriak ziren, eta arazoa irtenbide bat emateko egoera behar bezala umatua zegoen: gazteek, eragileenek, mundua ere beste begi batzuekin ikusten zutenek, batasuna behar zuten, batasuna nahi zuten. Eta hori eskatzen zuten. Txillardegik ere, haien artean. Ez hori bakarrik: urteekin, batasunean azkenean onartu den eredua, esan daiteke, Txillardegiren buruan hasi zen egosten.

Batasuna Txillardegik egin lanari lotua dago, beraz. 1963ko udazkenetik aurrera, eta 1964ko udaraino hasi ziren batasun kontu honetaz arduratuak ziren zenbait lagun hilabetero elkarrekin bilkurak egiten, Euskal Idazkaritzak antolaturik, Baionako Kordelieren karrikako 14. zenbakian, lehen solairuan. Han egon zenetako batek, Jean-Louis Davant-ek (2012), esaten digun gisan: «bizpahiru ETAko, beste hainbat EAJko (haietan Monzon), ni Enbatakoa, Roger Idiart irakaslea, azken bilkuretan beste hiru apez: Andiazabal, Hiriart-Urruty eta Lafitte». Hara joandakoen artean, Txillardegi zen, beharbada, eragile nagusietako bat. Urte horretako abuztuaren azken egunetan, 29an eta 30ean, hain zuzen, jarri ziren batasunaren lehenbiziko harriak, jardunaldi berezi batzuetan, eta han erabakitakoa *Yakin*-ek (horrela deitzen zen garai hartan) argitaratu zuen 1965ean. Ez ziren, noski, hutsetik abiatu: 1959an argitaratua zuen dagoeneko Arestik *Maldan Behera*, Koldo Zuazoren ustez (1989, 272), «gerora *euskara batua* deituko zen eredu estandarraren adibide gardena». Beste anitzek ere iritzi bera dugu. Gauza bera edo aski antzekoa dio Mitxelenak Bergaran aurkeztu hitzaldian (Euskaltzaindia 1978, 473). Baionako horren ondotik argitaratu zen *Baiona'ko Biltzarraren Erabakiak* izeneko dokumentua. Davantek berak geroago egindako txosten batean (2005, 209) biltzen du ezin baino hobeki bizi zuten batasunaren grina:

> *Batasuna, Euskaldunen betiko ametsa eta nahikaria… Batasuna, harri zaharretan eta erredoletan, bai eta behinere baino gehiago, euskal bihotzetan barna sartua den helburua… Batasuna, Euskal Idazkaritzak zuekin Euskaltzaindiaren inguruan, bilatzen duen xedea…*

2. Francisco Grandmontagnek (1960: 385) hola eratutako hizkerari (nahiz bera Hegoameriketakoaz mintzo) buruz holakoa izango zela zioen: «más perfecto, más lógico, más natural que el formado artificialmente por las academias y los eruditos»

*Batasuna, oroz gainetik eta lendabizikorik, gure mintzaia maitean finkatu behar dugun oiñarria… Batasuna izan dadila, gaur eta gero ere, gure griña, gure kezka, gure arrangura lehena. Batasunari esker, agian luzaz biziko dira gure populua, gure Herria, gure Aberria, beste populu, Herri eta Aberri ororen artean.*

Baionako bilkuretan, ortografiako zenbait puntu, postposizio itsatsien markak («deklinabide» deitu ohi den hori), eta aditz laguntzailearen oinarrizko adizkiak zein diren erabaki zen, neurri handi batean Txillardegik (1958) egin proposamenari jarraiki. «H»-ren inguruko lehenbiziko zerrenda ere egin zen han. Funtsean, Arantzazun lau urte geroago bedeinkatu ziren proposamen hauek. Baina tarte horretan, Gerediaga Elkarteak antolatuta, Ermuan ere beste bilkura bat antolatu zen, 1968ko ekainaren 28-30 bitartean, azken bultzada emateko: han ezagutzen zituzten dagoeneko Arantzazun aurkeztuko ziren txostenetako batzuk eta, oro har, bidezko ikusi zituzten eta ontzat eman, nahiz azalpen batzuk ere eskatu zituzten. Idazleen elkartea sortzea erabaki zen, batasunaren prozesua «Euskaltzaindiak berak soilik eraman ezinezkoa» zelakoan (Euskaltzaindia 1969, izenbururik gabeko sarrera batekin), eta batzorde bat izendatu zen horretarako: San Martin, Lizundia, Beobide, Torrealdai, Gereño eta M. Pagola. Aditzaren batasuna bultzatzeko ere Euskaltzaindiak batzordeño bat izenda zezan eskatu zuten, izenak emanez, gainera (Mitxelena, Lafitte, Intxausti, Berriatua, Mendizabal eta Iraizoz), eta konpromiso hartu zuten JAKIN aldizkariak (tartean egin gabeko) Arantzazuko bilkuran hartzeko ziren erabakiei lotuko zitzaiela. Ez, ordea, *Anaitasuna*, honen helburutzat jo baitzuten Bizkaiko herrialdea batasunaren aldera hurbiltzen joatea. Mahaiburukoak Lasuen, Aranberria eta Basauri ziren, eta idazkaria, Jose Luis Lizundia. Berehala gaude Arantzazun, Euskaltzaindiaren 50. urteurrenean. Euskaltzaindiak 1968ko otsailaren 23an egin zuen bilkura Donostian. Batzar agirian hau irakur daiteke: «Aresti'k dio ordua dela euskeraren batasuna serioski artzeko eta biltzar nagusi horretarako gairik bearrezkoena euskeraren batasuna dala». Baina batzarraren prestatze lanak lehenago ikusten ahal dira, 1967ko otsaileko bilkurako agerian.

Hitz bat, hala ere, urte haietan gertatzen ari ziren gizarte aldaketa batzuez: ikastolak indarra hartzen ari ziren, eta testuak eskatzen zituzten, umeekin erabili ahal izateko; euskara erabili nahi zuten idazle berriak sortzen ari ziren han-hemenka, belaunaldi aldaketaren seinale (Ramon Saizarbitoriak ondoko urtean aterako zuen bere lehen eleberria); euskara antifrankismoaren sinbolo bizi bihurtzen ari zen bazter guztietan; euskal kultura aldatzen ari zen oro har; Gabriel Arestik urte horretan eskuratu zuen Literaturako Sari Nazionala; euskaltzaleek euskararen tradizio idatziaren ezagutzaren garrantzia aldarrikatzen zuten, eta guztiek oroitarazten zuten eredu idatzi baten beharra. Gizarte osoa zen aldatzen ari, Parisko maiatzaren oihartzuna indarrean zetorren, Pragan

eta Portugalen demokraziaren haizeak jotzen zuen, Bilboko unibertsitatea (geroago EHU izena hartu zuena) sortu zen, ordenagailuak ere bidean zeuden (nahiz eta garai hartakoak tramankulo ikaragarriak ziren), eta jende guztia zegoen Pardo izeneko etxera begira, noiz bukatuko ote zen frankismoaren amets gaiztoa eta noiz itzaliko leihoaren barne aldeko argia.

Hori zen ingurumena. Eta horretan euskarak bazuen aurrean, gainera, ahalegin ikaragarri bat: beste hizkuntzek urte luzeetan kurritutako bidea, epe labur batean egiteko beharra zuen. Arantzazu ere hor kokatu behar da. Euskaltzaindiak gerra ondoren egiten zuen zazpigarren biltzarra zen.

## 2. ARANTZAZUKO BILKURAREN HASIERA

Arantzazura hurbildu zirenek 50 pezeta ordaindu behar izan zuten matrikula gisa: hori egitea onartu zen behintzat Euskaltzaindiak Donostian irailean egin zuen bilkuran. Bilera horretan berean A. Zatarainek bere sakelatik 1.000 pezetako bat eman zuen gastuak arintzeko (Euskaltzaindia 1971: 193). «Sociedad Internacional de Azafatas» (SIA, SA) izeneko elkarte batek egindako gutun baten berri eman zen: Arantzazun berehala egin behar zen bilera zela eta, haien zerbitzuak eskaintzen zituzten.

Arantzazuko bilkura hasieran bi gauza nahasi ziren, eta trabatu, elkarren artean: batetik, gogo ikaragarria zegoen batzartutako anitzen artean batasuna lehenbailehen egiteko; bestetik, euskaltzain askok beldurra zuten kontuarekin, beldurra, besteak beste, gatazka larriak sor zitezkeelako. Garbi ikusten da hori garai hartako dokumentuetan. Manuel Lekuona euskaltzainburuaren sarrera hitzetan nabarmentzen da inon baino hobeki: batasuna, bai, baina kasu. Batasuna idazleentzat bakarrik egin behar da. Hizketan, «itz, orain arte bezala, bakoitzak bere eran», herrian «orain arte bezala». Literaturan ere, batasuna «idazti errikoietan, ez goi-idaztietan»: «ez olerkietan, eta Nobelistikan, adibidez; hortan idazleak azke gelditzen dirala, bakoitza bere erara».

Batasuna alor jakin batzuetan bakarrik egin behar da: aldizkarietan (garai hartako aldizkari batzuen izena ematen da: «Zeruko argia», «Anaitasuna», «Yakin», eta abar) ikastoletan («liburuetan eta jolasketetan») eta «liturgiaren zenbait zatitan». Hor bakarrik behar zela batasuna zioen Lekuonak, nahiz zaila gertatzen den argi ikustea erabiltzen zituen irizpideak. Lekuona jauna baimen eske bezala ari da bere sarrera hitzetan. Zeren bidea «zalla» da, gure hizkuntza aberatsa «pobretu» egingo baita batasunaren bidetik, bakoitzak txikitatik izan duena baztertu beharko du, eta besterena hartu: «eta orrek ere min ematen digu». Nola gorputz gaixoari ebakuntza egiten zaion, gaizki dagoen atala gorputz osasuntsutik bereizteko, hori gertatuko da euskarekin. Euskara indartzeko «beso-

bakartu egin bear», «anka-bakartu egin bear», mahastiekin gertatzen den bezala: mahats ondoa «iñaustu», «kimatu» egiten den gisan. «Min protxugarria» da hori. Ez da batasuna, hala ere, «panazea» izango: berdin-berdin hilko da euskara erabiltzen ez badugu.

Baina ez da euskaltzainburua horretan geratzen: non egiten den biltzarra ekartzen du gogora. Oñatin. Eta badakigu zer den Oñati: oñaztar eta ganboatarren tokia, borroken lekua: «Ez gatzazkiela, gure arbaso makur aien urratsai jarrai iñolaz ere», «ez gatozela Arantzazura, bakoitzak bere ezpata eskuan». Egin dezagun bakea.[3]

Alderdi ederra bilera hasteko! Bakea egin behar borrokan hasi gabe. Adierazgarria da hasierako hitz horien zatirik nabarmenenak holakoak izatea, eta ez batasunari legozkiokeen funtsezko oinarri akademikoen ingurukoak. Horrek islatzen du, neurri handi batean, garai hartan bizi zen gatazka, bi edo hiru belaunaldien artekoa. Biltzar ostean Euskaltzaindiak argitaratu zituen dokumentuetan aipatzen da 1920an eskatu zitzaiela batasunaren inguruko ikerlan bat egin zezaten Campion eta Broussain jaunei. Eta geroztik gai bera izan dutela esku artean behin baino gehiagotan Azkue, Altube, Orixe, edo Eguskitza bezalako euskalariek. Eta berrikiago gai beraz arduratu direla Krutwig, Villasante, Lafitte, Irigarai eta abar. Etorri da, hortaz, ordua, gaiari behar bezala heltzeko, euskararen etorkizunak hain beharrezkoa duen batasuna («literario batasuna», sic), garatzeko. Biltzarreko araudia oso xehea da, zehatza: hitza eskatzen duen bakoitzak hamar minutu izango ditu hitz egiteko eta «maaiburukoeri begira mintza bearko dira». Dena magnotofonoz jasoko da, eta erabakiak hartzeko orduan bozetara joko da. Batzarra irekia baldin bada ere (idazleak, ikastoletako irakasleak…zeuden deituak), boza euskaltzainek eta batzorde teknikokoek bakarrik izango dute, eta hirutik biren diferentzia beharko da erabakia ontzat emateko.

Mitxelena zen batzorde teknikoaren burua, eta mahaiburukoak ziren Haritxelar, Irigarai, Erkiaga, Lafitte, Larzabal, Irigoien, Labaien eta Satrustegi («Beretariko norbaitek uts egitera, bertara joaten diran euskaltzañak beteko dute [tokia]»). Euskaltzainburuaren sarrera hitzaldiaz gain, baziren beste hitzaldi nagusi batzuk —ez dakigu zer irizpideren arabera aukeratu zituzten—, espresuki gonbidatuak. Hauek ziren egileak: Mitxelena («Ortografia»), batzorde teknikoaren izenean; Luis Villasante («Itzen formak»), Ambrosio Zatarainen («Itz berriak»), eta Salbador Garmendia («Deklinazioa»). Gero, argitalpen ofizialetan izenburuak aldaturik argitaratu ziren,[4] eta hurrenkera ere aldatua. Argitalpen

3. Hemengo aipamen guztiak «Euskeraren batasuna» izeneko dokumentutik hartuak dira. Manuel Lekuonaren sarrera hitzaldia da. Hemen ikus daiteke dokumentu hau: http://www.euskaltzaindia.net/dok/euskera/51282.pdf

4. Lanak Euskaltzaindiaren aldizkari ofizialean argitaratu ziren lehenik: «Arantzazu-ko biltzarrak (sic), 1968, urriaren 3, 4 eta 5-ean», *Euskera XIII*, 1968, 137-265. Euskaltzaindiak, ondoko urtean, argitalpen berezi bat egin zuen, «Irakur sail» izeneko bildumari hasiera emanez: «Euskera

ofizial horretan, hitzaldi horietaz gain, badira beste lan batzuk ere. Horrela, Villasantek egindako «Batasunari buruz bibliografia» izeneko lana eta «Batasunari buruz batzuk agurka eta beste batzuk aurka» izeneko atala, non biltzen baitira, laburturik («osorik ematerik ez dagoen ezkero»), beste hamabi ekarpen: Txillardegi, Gereño, Lojendio eta Iratzeder, batetik, batasunaren inguruan; Mokoroa, Onaindia eta Kamiñazpi, bestetik, batasunaren auziaz, eta «h» letraz; Etxaide, Murua eta Krutwig jauna «h» letraren inguruan mintzatzen dira; «batasuna eta izena» aztertzen du Santamaria jaunak eta Kerexeta «deklinazioa» izeneko gaiaz ari da. Eztabaiden parte batzuk ere jasotzen dira («Elkar-hizketak»), euskaltzainburuaren amaiera hitzak («Azken-itz»), eta «Batasunerako hiztegia» deitu dokumentua, buruaren azken hitzen ondoren.

Lan horien guztien artean oinarrizkoena Mitxelenarena da. Batzorde teknikoaren izenean aurkezten du, baina ez da dudarik gehiena berak egina dela. Berehala ikusiko dugun gisan, lan horrek euskararen atal asko ukitzen ditu, baina ez du izenburu egokirik. Lehenbiziko argitalpenean «Ortografia» (Euskaltzaindia 1968) izena darama izen nagusi gisa. Bada beste bilduma bat (Mitxelenaren txostena eta hitz zerrenda biltzen ditu), baina hau idazmakinaz egina da, nahiz Kriselu argitaletxearen marka daraman (Ricardo eta Begoña Arregui 1969). Hor «Ortografiaz» izenarekin ageri da. Ondoko urteko argitalpenean («Euskera batasuna») ez du izenbururik: aurkibidean sei atalak ikusten dira (lehenbizikoa bakarrik ortografiari buruzkoa), eta liburua zuzenean hasten da atal bakoitzarekin lehenbiziko atalarekin, goiburuko izen ofizial orokorrik gabe. Ez zuen liburu horrek urte horretako argitalpen txukunen saririk irabazi.

## 3. ARANTZAZUKO BILKURA ETA MITXELENAREN EKARPENA

Mitxelenaren txostenak hizkuntzaren batasunarekin zerikusia duten sei atal nagusi ukitzen ditu, xehetasun desberdinarekin ordea (parentesi arten nire oharrak):

1. Oinarriak (Zertan oinarritu behar den batasuna)
2. Ortografia (hau da, pentsatzekoa denez, atalik landuena)
3. Hitzen forma
4. Hitz berriak
5. Morfologia

---

Batasuna» (1969). Baina edizio berri honetan Villasantek batasunari buruzko prestatutako bibliografia, euskaltzainburuaren sarrera hitzak, «Batasunerako hiztegia», «Literatura euskeraren batasunari buruz Euskaltzaindiaren agiria» eta euskaltzainburuaren azken hitzak bakarrik biltzen dira. Gainerako hitzaldiak ez dira aipatzen.

6. Joskera (hau da gutxien lantzen dena)

Garai hartan zegoen saltsa eta idazleen arteko tirabirak kontuan izanik, Mitxelenak aurkeztu zuen lanak zerbait erakusten badu sena da hori, zentzu komuna gainezka.

Mitxelena berehala konturatzen da euskarak hil edo bizikoa duela batasun bidea. Egokiena litzatekeela, noski, euskaldun bakoitzak gainerako euskalki eta hizkerak ezagutzea, gaurkoak eta antzinakoak. Baina hori ezinezkoa da, eta batasuna egiten bada, eta egitea beharrezkoa da, ñabardura asko galduko ditu eredu horrek ezinbestean. Ez da beste biderik. Eta hori ezin da egin inor ere mindu gabe, Euskaltzaindiak inor ere mindu nahi ez badu ere. Batasunaren inguruko erabakiek bi helburu nagusi dituzte: euskalkiak ez gehiago urruntzea bata bestetik, eta, ahal den neurrian, elkarrengana biltzea. Oraingoz ezin da euskalki bat hautatu oinarri gisa, eta oinarrizkoago diren proposamen batzuk egin behar dira, ez besterik, maila desberdinetan. Gauza asko oraingoz ezin dira ukitu, eta ez da komeni ere ukitzea.

### 3.1. Ortografia

Mitxelenak, hurbileko hizkuntzekin antzekotasun handia duen oso eredu soil eta erraz ulertzeko moduko sistema aukeratzen du: ez, jakina, proposatutako ortografiako letrek euskal soinuak zuzenean eta erlazio biunibokoan aurkezten dituztelako, hori ez baita inongo hizkuntzatan gertatzen. Ezinezkoa da, gainera, definizioz hizkuntza hotsek aldatzeko joera dutelako, eta ortografiako letrek, alderantziz, betiko gelditzekoa. Baina proposatzen duen sistema hotsetatik, nola sentitzen ditugun, hurbilago gelditzen da eta, alde horretatik, beste hizkuntza batzuekin gertatzen dena baino, alfabeto gardenago, nahi bada. Horrela, Baionako bilkuran proposatutakoa oinarritzat hartuz, zeinu «berezi» guztiak baztertu eta alfabeto garden bat, *f* letra barne (historian zehar eztabaidak gertatuak ziren letra honekin, euskalduntasun nahiko ez zuelakoan edo), proposatzen du idazkeran, eta zenbait letra (*c, qu, v, w, y)* hizkuntza arrotzetako hitzak transkribatzeko bakarrik uzten ditu.

Diagramak (*tt, dd, ll, ñ*) premia denean bakarrik erabiliko dira, bestela *il* eta *in* idatziko da. Hots bustiek ez dute toki gehiegi hartzen proposatzen den sisteman, eta hitz adierazkorretarako bakarrik uzten dira: *andereño*. Jakina, *r* bakuna eta *rr* dardarkari anizkuna bereizi behar dira, betiere kontsonanteen tileta guztiak kenduz. *J* idatziko da, nahiz gero bakoitzak bere erara ahoskatuko duen, eta antzinako hotsa denean *x* ere: *axola* (eta ez *ajola*). Kontuan hartu behar da neutralizazioen kontua, eta beti *n* idatzi, berdin dela nola artikulatzen dugun letra horrek ordezkatzen duen soinua: *zango, ganbara*. Gauza bera *r* letrarekin: *ur* eta *ura* (bi soinu, baina letra bakarra). Zaila gertatzen da arau zorrotzik ematea *(t)s, (t)z* edo *(t)x* soinuen ondoko neutralizazioetan: *hitz + bide*

kateak *hizpide* ematen du, baina hor dugu *ikusgarri* ere. Ahal dela, ordea, lehenbiziko bidea segituko da, etimologia kontuan hartu gabe. Silaba hastean, *n, l* eta *r* ondoren *tz, ts* eta *tx* (*suntsitu*). Araua ez da, dena den, hain zorrotza *r*-ren ondoren. Hitz amaieran izan ezik, silaba bukaeran *tz/z, ts/s; tx/x* neutralizaturik geratzen dira: *huts* baina *hustu.* Hitz hastean *z* eta *s* erabiltzen dira. Baina, hiztunen arabera, *x* eta *tx* ere: *txori/xori*. Hobe bigarren bidea hartzea.[5]

*Z/s* (eta *tz/ts*) bereizten ez dakitenek bereizketa hori egiten ikasi beharko dute. *H* letrari dagokionez ere, Baionako proposamena bere egiten du Mitxelenak: bi bokal berdinen artean *(mahai*, *zuhur*) erabiliko da, behar denean bakarrik, eta ez kasu markek sortzen dituzten loturetan: *semeei* idatziko da. Bi bokalen artean, desberdinak badira ere, behar denean: *aho.* Silabak bereizteko balioko du, besteak beste: *nahiz.* Bokal artean ez bedi ordezkatu *h* hori beste kontsonante batekin: baztertu, hortaz, *legor* edo *egun* (*lehor/ ehun*). Hitz hastean hitz batzuek beharrezkoa dute *h,* eta egokiena da zerrenda bat egitea horiekin (*hats, hitz, hotz*). Ez da *h*-rik idatziko kontsonante herskarien ondotik (*ate, etorri,* baina ez **athe, *ethorri*), ez bestelako kontsonanteen atzean: *ero,* ez **erho*. Ez da idatziko *h*-rik diptongoen ondoan ere.[6] Grafema honen inguruko beste puntu batzuk aipatzen dira txostenaren atal honetan, geroago lantzeko uzten direnak.

Puntuazio kontuak ere ageri dira, eta Europako hizkuntza gehienek hartzen duten bideari jarraikitzea proposatzen da. Istilu larrienak hitz elkartu eta eratorrietan aurkitzen ditu, eta metahizkuntzaren inguruan. *Ba* baldintzakoa eta *ba* baiezkoa berdin idaztea proposatzen du, elkarturik. *Bait*-i dagokionez, elkarturik, edo loturik (*baita* edo *bait da*), printzipioz. Baina, horrekin batera, ezezko *ez* partikularekin gerta daitekeena aipatuz (*ez dago / eztago; ez luke / eluke*) egokiago ikusten du beti bereiz idaztea (*ez dago*), nahiz horrek berarekin daraman ahoskera aldatzeko arriskua. Halaz guztiz, berak nahiago bai bata bai bestea bereiz idaztea.[7]

Hitzen elkarketa dela eta, nekez ikusten du hor arau zorrotzik eman daitekeenik, kontuan izanik idazleen artean dauden aukerak: *dirugose, diru-gose, diru gose.* Hitzaren sorrera urrunekoa bada, elkarturik idaztea onar liteke (*galbide*), baina bestela bereizirik: *hitz egin* (*hitzik egin* ere esan daitekeenez). Aditzarekin agertzen diren «atzizki» batzuen inguruan zalantzak uzten ditu mahai gainean: *duenez gero, duen ezkero,* baina *atzo ezkero,* eta abar.[8]

---

5. Zernahi gisaz, gero batasunak baztertu du proposamenaren puntu hau.
6. Baina gero batasunak kontrako bidea hartu du batzuetan: *auhen, oihan*
7. Honetan ere batasunak azkenean beste bidea hartu du: *ez* bereiz idaztea, eta *bait* loturik (dagozkiokeen aldaketa fonologikoekin, noski: *bailuke*)
8. Batasunak, *harrezkero* bezalakoak kenduta, bereiz idaztearen bidea hartu du azkenean

### 3.2. Hitzen forma

Euskal hitzak zein diren eztabaidatzen du Mitxelenak atal honetan. Euskal hitzen kontua beti baldin bada, neurri batean bederen, idazle, itzultzaile eta euskaltzale guztien kezka, kontuan hartu behar dugu garai hartako giro nahasian, gizarte osoa bil-bilean baitzegoen, kezka hau areagotua zegoela. Eztabaidaren mailak ere anitzetan nahasirik gertatzen ziren, ez jakinik batzuetan zer zen eztabaidak berak ezkutatzen zuen gaia. Ez da harritzekoa, hortaz, txostenean, atal honen hirugarren puntuan, hau irakurtzea: «Batasunik baldin bada gure artean […] hitzen bat euskaldun guziek edo gehien-gehienek badarabilte, hori da, besterik gabe, onhartu behar duguna». Hori euskal hitza da, beste gisa batean esateko.

Hitzik hedatuenak, literaturan gehien erabiltzen direnak, hartu behar ditu euskara idatziak. Batzuetan, kontzeptua bera adierazteko itxura desberdineko hitzak (*ate* eta *borta*) izan ditzakegu eskura. Biak hartu, esanahian ñabarduraren sartuz ahal bada. Hots aldaketaren ondorio badira (*berri/barri*) bat aukeratu beharko da, hedatuena, betiere «jatortasuna» kontuei kasu eginez: *bier, ixen, biño, nipe, lez…* arbuiatu behar dira hizkuntza idatzian. Holako gehiegi ditugu gure bazterretan.

Forma zaharrago eta berriagoen artean, zaharrenei (erabiltzen badira, noski) eman behar zaie lehentasuna, mailegatze legeak errespetatuz: *bekatu, bake, dolare.* Betiere, zabalduak baldin badaude. Bazter euskalkietako formak bigarren mailan geratuko dira erdialdekoen parean, hauetatik bereizten badira. Ez, ordea, erdikoa alde batera (*burni*) eta bazterrekoak elkarren artean bat badatoz (*burdina*). Orduan azkenekoek lehentasuna.

Erdaretatik etengabe hartzen ditugun hitzek nahaspila sortzen dute, nolanahi hartzen baititugu (anitzetan ez dute aldaera idatzirik ere). Zehaztu behar horietan «-a» itsatsia mantendu behar den edo ez, «-o» edo «-u» behar duen (*artikulo/u*), «s» edo «z» (*z/sopa*). Hiztegi ortografiko bat beharrezkoa litzateke.[9]

### 3.3. Hitz berriak

Hizkuntzek hitz berriak behar dituzte beti: bere baitarik sortuak, edo aldameneko hizkuntzaren batetik mailegatuak. Baina ez da hitz berririk sortu behar, hizkuntzak baldin badu berea dagoeneko. Hitzak sortzeko orduan hizkuntzaren moldea eta sena izan behar da beti gogoan. Euskaraz hitz elkarketa bereziki baliagarria gerta daiteke, gogoan izanik beti eredu zaharrak (*luze* → *luzatu*) eta analogiak anitzetan bi sistema desberdin elkarren aurka bulkaka dituztela. Gure hizkuntzak sorbide ugari baldin baditu ere, kulturaren

9. Hiztegi zerrenda bat baino gehiago egin baldin badira ere (berehala atera zuen Euskaltzaindiak *Batasunerako hiztegia*, Arantzazuko txostena biltzen zuen argitalpen berean), 2000. urtean argitaratu zuen Euskaltzaindiak lehenbiziko hiztegi mardula.

arloan kanpora begira jarri beharko ditugu begiak, huts nabarmenak gertatzen baitzaizkigu horrela egiten ez badugu: latinezko aurrizki guztiak (*ab-, de-, ex-, dis…*), hain emankorrak direnak, falta zaizkigu. Eta kanpoko hitzak mailegatzean, hitz arruntak badira eta ez arras ikasientzat (edo izen propioak), xinpletasuna hobe: *psikologia,* eta ez *psykhologia*. Bakan batzuetan ez legoke gaizki «v» ere gordetzea: *vektore*. Eta *-logia* amaiera dutenetan hobe horrela *-lojia* baino, horrek ahoskeran nahasteak sor baditzake ere.

### 3.4. Morfologia

Morfologiaz ari denean, hitzen formaz ari da Mitxelena. Eta, bereziki, izenaren eta aditzaren morfologiaz. Izenari dagokionez, biziki gomendatzen du mugatzaileduna (*mendiaren, mendien*) eta mugatzaile gabea (*mendiren*) bereiztea, gure artean, «Gipuzkoan batez ere», hori galtzen ari baita. Hitzek «-a» berezkoa duten edo ez ere jakin behar da. Ontzat ematen du, bestela, Baionako bilkuran onartutako formak, batzuei (*mentietatik, guregan*) beste marka batzuk gainditzea komeni bada ere (*mendietarik, gure baitan*). Azpimarratzen du instrumentala errespetatzea komeni dela (*ezpataz jo* eta *ezpataz mintzatu* bereiztea komeni da), eta erakusleen artean dagoen nahastea azpimarratzen du.

Aditzari dagokionez, euskalkietako paradigma osoak bildu behar dira lehenik, beste euskalkietatik gutxien saihesten direnak hautatuz, eta azken orduko berrikeriak (*zetoztene*) baztertuz. Aditz sisteman komeni da mantentzea gaur egun ere zenbait tokitan indarrean dauden bereizkuntzak (*on da* eta *on litzateke*, adibidez). Eta «izenkiak» deitzen dituenak ere bereizi behar dira, noiz erabili eta noiz ez: *sartu da / sar dadin*. Zernahi gisaz, uste du aditz laguntzaile molde bat baino gehiago onar daitekeela: *diot* formatik *nion* formara pasatzen bagara, edo *deutsat*-etik *neutsan*-era, ez genuke arazorik izan behar *diot*-etik *deutsat*-era pasatzeko.[10]

### 3.5. Joskera

Sintaxi eta estilistika kontuen gaineko iradokizun batzuk egiten ditu atal honetan. Hizkuntzaren barruan maila bat baino gehiago bereizi behar da (prosa, elkarrizketa, antzerkia, poesia…), baina euskara idatzia erabiltzeko orduan, euskara menderatzeaz

---

10. Berrogei urte baino gehiago pasatu dira txosten hau egin zenetik: geroztik, berehala ikusiko dugunez, aditz laguntzailearen sistemaren forma onartu zuen Euskaltzaindiak (batasunerako *deutsat* bezalakoak baztertu ditu). Aditzoina (*sar*) eta partizipioa (*sartu*) formak argi bereizi ditu: ik., esate baterako, 28. Araua (http://www.euskaltzaindia.net/dok/arauak/Araua_0028.pdf) eta 85a (http://www.euskaltzaindia.net/dok/arauak/Araua_0085.pdf). Baina formaz aparte ez du deus esan. Ez du esan noiz erabili behar diren forma horiek (*sartu dadin* edo *sar dadin*), nahiz idazle gehienak bigarren horretara makurtzen diren.

gain, ezinbestekoa da prosa horri kultura kutsu argia ematea. Horretarako kanpotik edan behar dugu, eta hizkera mota hori garatzeko orduan, nazioarteko hizkuntzek zer egiten duten ikusi behar dugu. Ongi dago «euskal kutsua» ematen saiatzea, baina hori azaleko edergarrien kontua da, prosak ur garbiaren pare behar baitu izan: «inongo usairik, kolorerik eta zaporerik gabea».

## 4. AZKENEKO OHAR BATZUK ARANTZAZUKO BILTZARRAZ

### 4.1. Bestelako txostenak

Mitxelenak zentzu komuna ekarri zuen garai zail eta jori haietan. Haren *auctoritas* akademikoa onartu zen, eta horrek bideratu zuen batasuna. Euskararen enbor bakar eta komuna zaindu behar zen, horrek euskalkien arteko bereizketak urratuko bazituen ere. Euskalkien desberdintasuna aberastasuna izan daiteke hizkuntzarentzat, baina garai hartan batez ere hizkuntzak zuen ahuleziaren seinalea zen: «Literatura-hizkuntza osatu, ala euskalki guziak hil: hau da gure hautakizuna», zioen Txillardegik (1968, 222). Hizkuntzaren batasunak zekarkeen (ez batasunak bakarrik, baina ezinbesteko baldintza zen hura) hizkuntzak indarra hartzea.

Esan bezala, beste txosten batzuen berri eman zen, nahiz bilkuran ez ziren denak irakurri. Euskaltzaindiak berehala (1968) argitaratu zituen, batzuk osorik (hiru txosten nagusiak: Garmendia, Zatarain, Villasante), eta besteak (gainerako guztiak) laburturik.

- Garmendiak «Deklinazio» izeneko lana aurkeztu zuen.[11] Funtsean gaur egun ditugun formak proposatzen ditu. Argumentu gisa, horiek dira —dio— autore zahar eta berriek erabili dituztenak gehienetan, eta Azkue, Lafitte eta Omaetxebarria jaunek ere gauza bera proposatzen zuten beren lanetan. Hori onartu zen, gainera, Baionan eta Ermuan egindako bilkuretan, punturen batean ageri diren eztabaidak alde batera utziz. Absolutiboari (*nor*) «pasiboa» deitzen dio, eta ergatiboari «aktiboa». Instrumentalari «objetiboa» ere deitzen dio. Ablatiboa eta partitiboa baturik ematen ditu azalpenetan. Leku izenek hartu behar dituzten markez (*Tours-ko* vs *Tours-eko*), bizidunenez, *a* itsatsiaz, indeterminazioaz, eta abar, egiten ditu hainbeste ohar interesgarri.

---

11. Adierazgarria, bide batez, jarritako izenburua bera, mugagabean. Ez dakit geroko editoreren baten lana den, edo egileak berak jarria. Nolanahi ere, bistan da hiperzuzenketa argi baten aitzinean gaudela, euskaldun guztiek, zerbait esatekotan, «deklinazioa» esango bailukete, eta ez «deklinazio». Baina han, mugagabearekin eta mugatuarekin borrokan, erraz pasatu ziren teoriatik praktikara.

- Zatarainek ohar andana bat egiten du hitz berrien inguruan, horretarako Mitxelenak prestatutako oinarrizko txostena eztabaida ardatz gisa hartuz. Bera ere, Mitxelena bezala, erdaretatik aspaldi hartutako hitzak euskaraz errespetatzearen alde dago: «aspaldian sarturik dagon itza kendu ta bestebat sartu nai edutea ezta pulamentuzko jokabidea, denbora ta kemenak alperrik galtzea besterik ez baita» (Mussolinik italierarekin garai batean egin nahi izan omen zuena aipatzen du puntu honetan). Eta bereizketa batzuk (*konfesatu* vs *aitortu*, esaterako) egitea proposatzen du, inguruko hizkuntzetan egiten den gisan. Egia esateko, biziki interesgarria da Zatarainen lana, hitz berrien eraketa dela eta, hainbeste hizkuntzaren adibideak jartzen baititu erakutsian, ikusteko nolako zailtasunak aurkituko dituen euskarak. Bistan da, zernahi gisaz, «f» grafema ez duela batere gogoko eta, ahal dela, garbizalea dela. Baina ongi argudiatzen ditu bere arrazoiak.

Villasanteren txostena da, hiru hauen artean, landuena eta eztabaidarako ideia gehien ematen duena. Handik ez luzera euskaltzainburu izango zenaren jakituria aski argi gelditzen da begien bistan lan honetan. Egia da Garmendiak ederki biltzen duela «deklinazioaren» eredua, eta aski praktikoa dela. Zatarainek ere hainbeste gai jartzen ditu mahai gainean. Baina Villasanterenak, ongi argudiatua izateaz gain, aski ongi erakusten du zein izan daitekeen urek hartu behar luketen bidea batasun kontuetan. «Antziñako euskal hitzen formaz» da lanaren izenburua, baina hori baino askoz ere gehiago ere bada (edo gutxiago, nahi bada, bestetik ikusita, hain sakonak dira ukitzen dituen gaiak). Hasierako orrialdeetan zenbait hausnarketa egiten du, nola iritsi diren hizkuntza batzuk batasunera: hiriburu bateko eredua hartuz (katalana eta Bartzelona, lekuko), edo eskualde batekoa (Toskana eta italiera, adibidez), horretan ere desberdintasunak baitaude hizkuntzen artean. Hemen, gure artean, erdialdekoa (lapurtera-gipuzkera) hartu behar litzateke oinarri gisa, desberdintasunak ez baitira hain handiak, nahiz azken orduko txokokeria anitzek euskalki hauen elkarren arteko harremanak ahultzen dituzten: lehenagoko idazkiak errazago ulertzen dira, lekuko, oraingoak baino. Berak uste du Axular aztertzea ezinbestekoa dugula euskararen batasuna egiteko, eta hiztegi bat egiten hasi beharko lukete euskaltzaleek egile horrek erabilitako hitzak kontuan izanik: berak dagoeneko landutako 1.668 hitzen berri ematen du (zazpi letra), eta hortik sortzen zaizkion iradokizun guztiak jartzen ditu erakutsian maisutasun handiarekin. Lanak ez du galdu oraindik ere, esan daiteke, beti izan duen gaurkotasuna: aukeratutako gaietan, egiten dituen proposamenetan, ematen duen informazioan, eta batasuna erdiz erdi jotzen duten arazoetan.

Hiru txosten nagusi hauen ondoren datoz gainerako lan guztiak, txosten laburragoetan bilduak:

- Txillardegik batasunaren beharra, arauak ezagutaraztea eta euskaldun berriak gureganatzearen beharra aipatzen du.
- Gereñok euskara batua kultura bidean sartzearen beharra oroitarazten du.
- Lojendiok uste du batasuna gipuzkerarekin egin behar dela («Ez gipuzkera osatu batean. Gipuzkera utsez baizik»), euskaldun gehienentzat errazena delako. Haren ustez, «h» letrak ez du tokirik hor.
- Iratzederrek argi ikusten du batasunaren beharra, Laphitz, Duvoisin eta Diharasarriren lanetan oinarritua.
- Mokoroak ez du ikusten inondik ere euskarak hain beharrezkoa duen batasuna: euskalkien desberdintasunak ez dio kalterik egiten hizkuntzari, eta ez diogu herriari berea ez duen bidetik bultzatu behar. Eta «h» letrari dagokionez, ez da erabili behar: «elorriz eta sastrakaz josita» uzten du hizkuntza.
- Onaindiak batasunaren beharra ikusten du, nahiz ez duen uste hil ala bizikoa den hizkuntzarentzat. Baina askotan horren beharra aldarrikatuta ere, nork bereari eragiten dio («…istillu geiegi darabilgu euskal idazleok, bakoitzak bere iritziari oso setati eutsi naiean»). Mitxelenaren txostenari atalez atal egiten dizkio oharrak: batzuetan bat dator, beste batzuetan ez. Ez da «h» zalea, testuinguru markatu batzuetan ez bada.
- Kamiñazpik euskalkien batasunean «euskalkien eriotza» ikusten du. Batasunak ez du euskara indartuko. Dena den, ezinbestekotzat hartzen badu batzarrak, batasuna gipuzkeraren gainean egin bedi. «H» letra ez da erabili behar: hori, idazlea «eragozpenez» («difikultadez», argitzen du berak) betetzea litzateke.
- Etxaideren ustez, batasuna iristeko «h» letra «honartu» (sic) behar dugun edo ez, hor dago kontua.Ortografian bederen euskaldunok bat etorri beharko genuke. Letra hau baztertuz gero ez dago batasunik, hori egitea, Iparraldeko euskaldunen «arimari zati bat erauztea» bailitzateke. Haiek beste kontu batzuetan eman badute amore, bada garaia guk puntu honetan emateko, euskera ez baita gipuzkera: garaia da «geregoikeri hau gure baitatik usatzeko».
- Muruaren ustez, «h» letra erabiliz gero, euskara idaztea eta irakurtzea zailago bihurtzen da. Ez du ulertzen zergatik hartu zuten grafema hau erabiltzeko erabakia Baionan. Ez da hobe behin betiko baztertzea? Uste du «bayez» (sic).
- Krutwigek «h»-dun hitzen zerrenda luze bat aurkezten du: proposatzen dituen hitzetako asko ez datoz bat Mitxelenak finkatutako irizpideekin. Batez ere, grafema hori kontsonante ondoren jartzen duenean: *khendu, ikhusi, nekhazale,* eta abar, lapurterazko tradizio klasikoa segituz (nahiz badiren inkoherentziak: *ikhasi, bekhatu, ekharri…* bezalako hitz arruntak, esaterako, ez dira ageri zerrendan).

- Kerexetak Garmendiaren txostena, deklinabidearen ingurukoa, kritikatzen du: ona bada ere, «argi ikusten da *gipuzkerari* bidea zabaltzeko asmoz egin dauana». Eta ondoren ohar batzuk egiten ditu proposamenean biltzen diren kasu formen inguruko markez, eta aditzarekiko komunztaduraz.
- Santamariak euskaraz ikusten dituen hitz motak hartzen ditu: euskalki guztietan berdin ageri direnak; idazkera desberdina dutenak; hitzak desberdinak direnean, eta abar. Eta horren inguruan, horien guztien arteko batasuna egiteko erabil daitezkeen irizpide batzuk proposatzen ditu: erraztasuna, jatortasuna, edertasuna, antza… Zerrendak egitea ezinbestekoa ikusten du.

**4.2. Elkarrizketak**

Euskaltzaindiak egin argitalpenak bildutakoen artean sortu ziren eztabaiden zatiak ere biltzen ditu, hitzez hitz: «Pedro Berrondo jaunak hartu ditu magnetofonotik», zehazten da ohar batean.

Zatarain jaunaren hitzaldiaren ondoren, esaterako, eztabaida sortzen da hitz teknikoen inguruan, kulturaren hizkerak sortzen dituen beharrez, eta abar. Villasanteren hitzaldiaren ondoren berriz ere hitz zerrenda baten egin beharra aipatzen da. Mitxelenarena hastera doanean, euskaltzainburuak berak, Manuel Lekuonak («Lec» bezala ageri da transkribatua) hartzen du hitza: «As gaitezen bada; ea Mitxelena jauna». Mitxelenak txostenean bildutako puntu nagusiak oroitarazten ditu, eztabaida saihets bideetara joan ez dadin. Eta hitz egiten dutenek ortografia kontuak aipatzen dituzte. Han agertzen dira berehala *koine, esperanto, euskara berria* bezalako hitzak, ondoko hilabete eta urteetan indarra hartuko zutenak. Batzartuak nahasten dira *lez/legez, bada/ ba da*, eta holako xehetasunekin, eta Mitxelenak lau urte lehenago Baionan onartutakoak ekartzen ditu gogora. Ikusten da eztabaida bizia dagoela, batzuetan nekeza ulertzeko, baina «arazoari» (ez da ikusten argi zeini) konponbide demokratiko gardena ematen dio Satrustegik, galdera hau egiten duenean: «Zer derizkiozute bada? Baionakoakin?». Liburuak dioen bezala, denek erantzuten dute: «Bai» (eta zortzi harridura marka gaineratzen dizkio hitz horri testu transkribatzaileak, zalantzarik izan ez dadin).

Eztabaida beroak sortzen dira «h»-aren inguruan. Lafitte eta Xarriton hasten dira lehenik, eta ikusten da berehala hor arazo serioak daudela. Puntu honetan Mitxelenak honela dio, ironia pixka batekin (edo ez?), goizean Elizako hitzaldian aita Alustizak esandakoak entzun ondoren: «Ama Birjiñak bedeinkatzen ditu gure batasunerako asmoak eta ekintzak… eta goiko laguntza eta graziakin… goazen aurrera H kontu honetan». Une horretako eztabaidan Ibon Sarasolak «Refranes y Sentencias» aipatzen du (baina ez da ondo entzuten zer dioen) eta grafema hori sartzeko alde ageri da: autore

hoberenen eredua segitu behar da. Ikusten da, hala ere, Ama Birjinaren graziarekin edo gabe, eztabaida berotu egiten dela arratsaldeko ordu horietan. Mitxelenak uste du gipuzkoarrek eta bizkaitarrek eman behar dutela amore kontu honetan: «bi bide baizik ez daude batasunerako: edo H dutenak utzi, edo ez dutenak artu. Nik, bigarren bidea hartu dut». Eta beroaldi horretan, argudioa indartzeko, kimikako lege bat aipatzen du, tenperatura diferenteko gasen inguruan. Euskaltzaindiari eskatzen dio «h» begi onez har dezan, «saio bezala». Puntu honetan Mugikak eskatzen du «ez indioarena egiteko» eta uzteko bakean letra hori, badirela beste premia batzuk, eta *h*-ak ez duela garrantzirik batasunerako. Hitz hauen ondoko txalo zaparradaren ondoren Xarritonek galdetzen du nola esaten den «imperialismo», *h*-rekin edo *h* gabe, gipuzkera osatuan. Orain beste aldekoek txalo zaparrada. Mitxelenaren eta Irigoienen artean ere sortzen da eztabaida.

Alde bateko eta besteko txalo horiek ez ziren, ez, ordea, xaloak. Letra horrek hainbeste gauza ezkutatzen zuen gibeletik, eta horien artean, euskal hitzak gorpuztea, euskara idatziari ezinbesteko funtsa ematea. Eta, aldi berean, zirt edo zart (batasun idatzia hartu edo ez) egin beharreko kontu batean, sinbolo ezin hobea zen: letra horren eztabaidaren atzean batasunaren beharra bera zegoen eztabaidan. «Arantzazuko bilkuran, gauza bat garbi ikusi zen: BATASUNAREN kontra egoteak arrazoi bat bakarra duela: dela 'h' hori erabili ala ez erabili. Ez da besterik» (Euskaltzaindia 1969: 10).

Eztabaida guztiak bukatu zirenean, euskaltzainak bakarrik bildu ziren. Eta konklusioak, aho batez onartuak, irakurri zirela dio liburuak. Liburuan berean Manuel Lekuonaren azken hitzak ageri dira segidan, eta euskaltzainburuak ere gauza bera esaten du: «Irakurri zaizkitzute, iru egunez izan ditugun billeraen azken-itzak, konklusioak». Lekuonak, euskara «teorian» batu dugula, laburtu dugula, erraztu dugula, dio. «Euskera elementala sortu degu: errexago idatzi dedin, errexago irakurri dedin, errexago ikasi dedin». Pixka bat harrigarria gertatzen da batasunaren kontzeptua holakoa izatea, egia esateko, baina lehenbiziko urratsa baizik ez dela abisatzen du: «Gu geurok gara. Euskararen gaxotasuna sendatu behar dugunak». Hitz egitean, horretan dago euskararen bizia, esaten du azkeneko agur hitzetan.

## 5. ARANTZAZUKO ADIERAZPENA

Azkenean, euskaltzainek hartutako erabakiak honela dio:

«LITERATURA EUSKERAREN BATASUNARI BURUZ
EUSKALTZAINDIAREN AGIRIA

*Arantzazuko billeren ondorean, han ziran euskaltzainak elkarturik, argi-bide hauek eman zituzten.*

Arantzazuko batzarrea egin ondoren, Euskaltzaindiak eskerrak agertu nahi dizkie etorri diren nahiz beren iritziak bidali dituzten guztiei.

Lehenik ikusi duguna da guztion ustez gure hizkuntzaren batasuna behar-beharrezko dugula. Batasuna, noski, ez da Euskaltzaindiak egin dezakean gauza, eta ere gutxiago bat-batean egin dezakeana. Batasun hori, euskera idatziaren batasunaz mintzatu geranez gero, euskal-idazle eta irakasleen eskuetan dago, Euskaltzaindia gidari eta laguntzaile dutelarik.

Arantzazun izan diren eta ez diren euskaltzaleak argibide bat izan dezaten, Euskaltzaindiak geroago eta astiroago argitarako dituen erabaki eta lanen aurrerapena agertu nahi du orain.

1) Ortografiaz hortarako hautatu zen batzordeak adierazi dituen pundu gehienak onhartuak izan dira, ikusi dugunez.
2) *H*-ren hauzian, izan diren iritziak entzun ondoan, erdi-bide bat aukeratu da hasteko: alegia, begi onez ikusiko lukeala Euskaltzaindiak letra hori bi bokal berdin nahiz ezberdinen artean erabiltzen hastea.
   Honek ez du esan nahi gorago jo nahi dutenen saioak ez direla ongi ikusiak izango.
3) Morfologiaz, izenen erabileraz batzordeak prestatu duen aintzin-lana pundu nagusietan oinharri bezala hartuaz jokatuko du, aditzarekikoa beste aldi baterako utziaz.
4) Aztertu dira, orobat, batzordeak euskal-hitz zahar eta berrien formaz gertatu dituen lanak, gero ere hori bide beretsutik hobeki lantzeko asmoz.

Atsegin hartu du Euskaltzaindiak elkar-hizketa honetan agertu den giroaz, gendetasun eta elkar lanerako gogoaz eta uste du, gero ere, guztion laguntzarekin, bere eginkizuna beteko duela. Hortan saiatuko dela.

EUSKALTZAINDIA
Arantzazu-Oñati, 1968-urrilaren 5-ean»

Adierazpen hori ere Euskaltzaindiak (1968) argitaratu zuen, aipatu argitalpenean, eta han berean, segidan, hitz zerrenda bat gaineratu zen, «Batasunerako Hiztegia», 2.000 inguruko «hitzik usatuenak eta hedatuenak» biltzen dituena. Zerrenda «ofiziala» deituko dut hau (hau guztia izan zen Euskaltzaindiaren *Euskera* aldizkarian argitaratu zena: 1968: 137-265).

Baina garai hartan euskaltzaleek zerrendak erabiltzen zituzten eskuen artean, leku batean eta bestean kopiak egin eta euskaraz idatzi edo euskara ikasi nahi zutenei emateko. Hitz zerrenda horiek direla eta, ohar bat egin nahi nuke.[12] Euskaltzaindiko liburutegian, normala denez,

12. Kontu hauek argitzeko laguntza ederra eman didate Euskaltzaindiko liburutegiko langileak diren Pruden Gartzia doktoreak eta Josune Olabarriak.

bada nahiko material garai hartakoa. Baina garai hartako materiala, hau ere normala denez, aski sakabanatua dago, eta zail gertatzen da behar bezala antolatzea guztia. Bada, hasteko, hau ere komeni da gogoraraztea, Akademiaren agiri solte bat bederatzi urte lehenagokoa (Euskaltzaindia 1959): «Euskaltzaindiaren agiria euskal hitzei buruz». Adierazpen horrek oroitarazten du historian zehar erdaretatik hartutako hitzak (*bekatu, bertso, eskola, dantza, kolore* edo *kafe* bezalakoak, lekuko) euskal hitzak direla, hitz «jatorrak» direla: «Euskal-itzak dira euskera bizian sustraituak daudenak». Zerrendan ehun sarreratik gora aipatzen dira, eta dokumentu hau izan daiteke euskara batuaren lexikografian paratzen den lehenbiziko harri sendoa, eta prozesu korapilatsu bati bide egingo ziona hurrengo urteetan.

Bada beste dokumentu bat idazmakinaz egina, data gabea, baina Arantzazuko batzarraren ingurukoa izango dena, hain segur ere. Izenburua «Oharpenak» du (Lafitte 1968a?), eta eskuz jarri du norbaitek «H letraren hiztegia, Lafittek gertatua» (700 sarrera inguru). Bada beste zerrenda bat (Lafitte 1968b?), beste idazmakina batek egina, izenburu gabea, eta hor ere norbaitek (Juan San Martin izan zen, itxura guztiez) «Lafitte. Literatura euskeraren batasunerako gertatutako hiztegia» jarri zuen bere garaian. Jakina, Arantzazuko materialetan argitaratutako «Batasunerako hiztegia» izeneko lanean ageri diren sarrera asko errepikatzen dira zerrenda horietan, baina zerrenda desberdinak dira guztiak. Itzul gaitezen orain zerrenda «ofizialera».

Zerrenda ofizial horren hiru bertsio atzeman ditut. Gehien ezagutzen dena, eta aipatuena, segur aski, Euskaltzaindia 1968 da. Baina badira beste bi: Euskaltzaindia 1969 eta Ricardo eta Begoña Arregui[13] 1969. Ia berdinak dira zerrenda horiek, eta denetan ageri dira sarrera berberak. Segur aski ere, garai hartan, han-hemenka ibiliko ziren euskaltzaleak hitz zerrendak argitaratu nahian, zegoen nahaste eta saltsa hartan argibide pixka bat egiteko. Horregatik, lehenik idazmakinaz egindako kopiek kurritzen zuten bazter guztietan. Holakoa da Ricardo eta Begoña Arreguik prestatutako lana. Lan horrek Mitxelenak Arantzazun aurkeztutako lana biltzen du lehenik, izenburu orokorrik jarri gabe, eta ondoren hiztegia, hau ere izenbururik gabea. Aurkibidean hiru kapitulu ageri dira: «1. Luis Mitxelena jaunak Arantzazuko Biltzarrean zuen ponentzia; 2. Hiztegi bateratuari Luis Mitxelena jaunak ipini dion ataria; eta 3. "Lehen euskal hiztegi bateratua"». Eta azkeneko hori jarri zaio lan osoari izenburu gisa, letra larriz. Liburu bezala ageri da, «Editorial Kriselu» jartzen duelako (Serie Hastapenak – 1º), baina idazmakinaz dago. Pentsatzekoa da ehunka edo milaka kopia egingo zirela dokumentu horrekin.[14] Hiztegi honen eta Euskaltzaindiak argitaratukoen —bi edizio desberdin egin baitzituen, 1968an eta 1969an, esan bezala. Biak berdinak

13. Berek aukeratu grafia errespetatu dut

14. Azkue Bibliotekan dagoen aleak badu beste ohar bat ere: gaineko partean «Luis Ibarra Enziondo, *Itarko*» esaten du. Segur aski ere, alearen jabetza adierazten du.

dira, tarteko hutsak gora behera— artean ez dago ia desberdintasunik. Badira huts batzuk (Euskaltzaindia 1968n *alaba* bi aldiz ematen da), baina bestela berdin-berdinak dira. Hala ere, Euskaltzaindia 1968an *bakoitz* ageri da (Kriselukoan *bakoitza*), *barkatu, bezain, bezala* ere ageri dira (bestean ez, esku artean daukadan kopian bederen), *zelai* bi aldiz ematen da (1969ko edizioan ere), eta *gurtu, gurutze* eta *gustu* sarreren hurrenkera aldatua dago (inoiz ere egin ez zen) Kriseluko edizioan. Beste guztietan, oker ez banaiz, bat datoz. Zerrendetan badira hitz batzuk *h* letra parentesi artean dutenak: oraingoz aukerakoa dela adierazi nahi da horrela.[15]

Honaino Arantzazun gertatutakoa. Xehetasun pixka batekin eman nahi izan dut haren berri, dokumentuek aski ongi erakusten baitituzte garai hartako eztabaiden nondik norakoak. Hantxe jarri ziren lehenbiziko harriak. Baina harri horiekin eraikin handia egiteko gai izan dira euskaltzale guztiak. Bazen, ikusten denez, gatazka handia hizkuntzarekin. Baina bazen zerbait gehiago ere.

Hizkuntzaren gatazka horretan belaunaldien gatazka ere suertatu zen: gazteenak oro har, belaunaldi zaharrekoak oro har ez bezala, batasunaren alde zeuden, eta berehala onartu zuten eredua, eta hura aplikatzen saiatu ziren hasieratik. Ordura arte ez bezala, beste zerbait nahi zuten euskarekin: zerbait bizia, baliagarria, balio beharko lukeena elkarren artean ulertzeko, euskalki desberdinetakoak elkartzen ziren aldi bakoitzean erdarara jo gabe: «Hizkuntza erabiltzen ez badugu, euskalki guztiek egina dute berea. Batasuna erdaraz egingo dugu», pentsatzen zuten.

Euskaltzainburuak eskatua zuen eztabaidetara ezpatarik gabe joateko. Biltzarra bukatu eta handik hilabete batzuetara utzi behar izan zuen kargua, hauteskundeak Villasantek irabazi baizituen. Diotenez, Lekuona ez zen etsita atera Arantzazutik, eta ez zuen kontua hain gaizki ikusten. Baina, itzuli zenean, elkarrizketa luze bat izan zuen, antza denez, Anizeto Zugastirekin, eta orduan beste modu batera ikusi zituen gauzak. Ondoren, euskaltzain batzuek lagundu zioten hausnarketa bideratzen, bide asko erabiliz, jakina, hausnarketa ahalik eta egokien egiteko, behin ezpatak goian zirela. Euskaltzainen bilkura informaletan behin eta berriz entzun izan dut Lekuonaren aurkako anonimo bat barreiatu zela garai

15. Egia esateko, hori horregatik ote den, ez da hain argi ikusten. Baina handik hamar urtera (hamar urteko epea eman baitzen, ea zer zioten idazleek), Bergarako batzarraren ondotik hartutako erabakietan, berriz ere *h*-aren auziari ekiten zaiolarik, argituko zen kontua. Horretarako omen zen parentesia, jendearen esku uzteko kontua, ea nondik jotzen zuten erabiltzaileek: «… orduan Euskaltzaindia ez zen beste xehetasunetan sartu […] eman zuen, orientapen gisa, Batasunerako hiztegia […] Eta bertan ikus daitekeenez, hitz asko daude han "H" hori parentesi artean dutenak —dudazko direnak, beraz—. Hau konprenitzeko kontuan eduki behar da "H" letraren erabilerari buruz Iparraldean bi tradizio daudela, Lapurdikoa eta Zuberoakoa, eta biak ez datozela beti bat» (*Bergarako biltzar ondoko erabakiak* in *Euskera 1979-3,* 54)

hartan, biziki gogorra (biziki gordina ere), inguruko euskatzaleen artean, eta eragin handia izan zuela hurrengo gertaeretan. Anonimoa zenez, ez zeraman sinadurarik, baina saindu izena zuen euskaltzain baten eskua ez omen zegoen sakelan sartua egun haietan. Hori esan izan da, behintzat, eta ez dakit noizbait baten batek argituko duen kontua.

Lekuonak kargua utzi zuenean hirurogeita hamabost urtetik gora zituen.

Ezin gara, hala ere, hor gelditu. Halako leherketa bat ikusiko zuten euskal letrek hurrengo urteetan. Leherketa hori ezinezkoa izango zen, beldur, beste hainbeste gauza gertatu izan ez balira ondoko hamar-hamabost urteetan. Ez dezagun ahantz aurretik ere egin zirela saioak lehenago, baina arrakastarik gabe gelditu ziren: Azkuek berak, euskaltzaleek hala eskaturik gainera, bere gipuzkera osatua jarria zuen mahaian. Nahiz denek txalotu zuten, inork ere ez zion kasurik egin praktikan. Zergatik? Bada, hain segur ere, oraino tenorea ailegatu gabe zegoelako. Arantzazukoa pasatu ondoren beste hainbeste aldaera gertatu ziren gizartean, eta horrek ere erraztu zuen batasunaren arrakasta. Berehala ikusiko dugun gisan, 70eko hamarkadan Euskaltzaindiak hartu zituen erabakiak oraingoz jende gutxirengana iristen ziren: euskarak zituen 300-400 irakurle horiengana. Kirmen Uribe sortu gabe zegoen oraindik.

Hartzen diren erabakiak dagokion jendeari helarazteko gutxieneko zenbait baldintza bete behar dira: hasteko, jendeak mezu hori hartu nahi izatea; bigarren, modua izatea mezua ongi banatzeko, bide duin eta arinak eskainiz; hirugarren, hartzen diren erabakiak barreiatzeko sistema egokiak izatea. Gutxienez, hiru horiek. Baina garai hartan ez genuen ez irratirik (1976an bultzatu zen «24 ordu euskaraz» izeneko ekimena), ez telebistarik, ez egunkaririk, ez ezer. Bic-ak erabiliz idazten genituen gutunak, gero postetxean jartzen genuen zigilua, eta handik egun batzuetara iritsiko zen gutuna markatutako helbidera. Autoa hartuz gero, Bilbotik Donostiara joateko 4 ordu behar izaten ziren anitzetan. Muga gurutzatzen genuen aldi oro autoa gainetik behetiraino begiratzen zigun Guardia Zibilak, eta Arantzazuko bilkura «emergentzia egoeran» antolatu zen, Barne Ministroak hala erabakirik. Eta bazen, gainera, hori baino lehenagoko kontu bat ere: zer zen orduan Euskaltzaindia? Euskaltzaleen gogo eta bihotzetan zegoen erakundea, indar gutxi eta babes legal urrikoa: batzuen aktibismo eta indarrak mahai gainean jartzen zituen proposamen eta ekimenek, anitzetan aski desordenatuak zirenak, mugiarazten zuten autodidaktez betetako Akademia. Hor kokatzen da Arantzazuko biltzarra.

Garai hartan, hortaz, eskuz esku eta atez ate pasatzen ziren erabaki hauek talde batetik bestera, euskaltzale batetik hurrengora, egiazko militantzia batek bultzaturik. Horretan utzi zituen indarrak Rikardo Arregik[16] (1942-1969) berak ere. Harekin ere zorra du, eta ez txikia, gaur egun izkiriatzeko erabiltzen dugun eredu honek.

---

16. Hemen arruntean erabiltzen den grafia hautatu dut.

Batasunaren historia bestelakoa izango zen, hain segur ere, Rikardo Arregi gabe. Bera izan zen batasunaren bultzatzaile garrantzitsuenetako bat. Zeren, erabakiak hartu, beti har daitezke, baina gero haiekin joan behar da aitzinat. Ezagutu zutenek diote gazte argia zela, kementsua, langilea, eta euskararen etorkizuna alfabetatze lanetan ikusten zuena, inon ere ikustekotan. Andoaindarrak alfabetatze kanpainak bultzatu zituen, euskara ikasteko eskolak han-hemenka sortu (AEK-ren sorrerarekin lotua dago), jendea animatu, kazeta artikuluak idatzi… ustegabeko istripu batek eraman zuelarik hogeita zazpi urte zituela. Aldamenean Ramon Saizarbitoria zuen. Egun horretan jarri zuten zangoa Aldrin-ek eta Armstromg- ilargiaren azalean.

Kontuak kontu, dena dela, hartu ziren azkenekoz lehenbiziko erabakiak. Azalekoak, nahi bada, eta unibertso itxikoak: kasuek dituzten markak dituzte, asko edo gutxi, baina ez dituztenak baino gehiago; gauza bera gertatzen da letren kopuruarekin edo adizkiekin. Baina hortik aurrera, batasunarekin segitzeko, goi mailako ikerketa egitea ezinbestekoa zen. Eta ez zen batere erraza ikerketarik egitea euskal ikasketak lantzeko unibertsitate gunerik ez zen tokian, eta tradizioko dokumentuak ere sakabanatuak baldin baziren. Informazioa behar zen. Eta informazioa kontsultatzeko, ordenatzeko, osatzeko… sistema ireki eta erabilgarriak behar zituen jendeak eta, bereziki, ikertzaileek. Hurrengo urte horietan jarri zen hori guztia konponbidean: unibertsitate publikoa sortu zen, abian jarri ziren unibertsitate mailako euskal ikasketak, eta handik gutxira, betiere 80ko hamarkadan, lehenbiziko aldiz hasi ginen ordenagailuak erabiltzen gure tradizioko euskara idatziaren lekukoekin elikatu ondoren. Horrek egin zuen posible inoiz ez bezalako datuak izatea, eta inoiz ez bezala datu horiek diskriminatzeko gai izatea. Horrela eratu zen, lehenik, oinarrizko datu base erraldoi bat (garai hartan egin zitekeenerako), Koldo Mitxelenak eta Ibon Sarasolak diseinatua, eta horrela hasi zen Euskaltzaindia *Orotariko Euskal Hiztegia* (Euskaltzaindia – Descleé de Brouwer, 1987-2005)[17] argitaratzen: Mitxelenak eta Sarasolak hasi, baina ia bere osotasunean Sarasolak landu eta amaitu duena. Horrela pasatu ahal izan ginen eskuko fitxetatik eta oinetako kutxetatik (literala da gero hau), ordenagailuak pantailan botatzen zituen milaka datu haietara. Hola pasatu ginen «halakok hau esaten du» (eta «halako» hori hitz egiten zuenak bakarrik ezagutzen zuen) «hau gure tradizioan horrela da» (eta «hau» horren berri makinak ematen zuen modu hotz eta objektiboan, datu guztiak prozesatu ondoren) esatera. Hola ikusi ahal izan genituen parean idazle on eta txarrak, eta erabakiak hartzeko aise sendotasun handiagoa izan genuen.

Beraz, batasunaren erabakia, batasunaren aldeko gogo eta irrika, tradizioaren indarra, datu aberatsak eskuragarri jartzea… hori guztia elkartu zen garai haietan. Baina,

17. Zuzenean kontsulta egiteko: http://www.euskaltzaindia.net/oeh

hala ere, hori ez zen aski izango. Ez zen aski izango 80ko hamarkadaren hasieran gure Erkidegoaren lehenbiziko gobernuak batasunaren aldeko apustu garbia egin izan ez balu. Eta hori gertatu zen Carlos Garaikoetxea lehendakariarekin eta Hezkuntzako buru zen Pedro Etxenike fisikariarekin. Haiek ere, eztabaida hartan, gazteen alde jarri ziren, batasunaren alde, «h» letra madarikatuaren alde. Eta Euskaltzaindiak hartu erabaki haiek katean barreiatzen hasi ziren: telebista, aldizkariak, egunkariak, eskoletako liburuak, argitaletxeak… Hola bakarrik eraiki ahal izan zen Arantzazuko zimenduen gainean etxe dotore bat. Belaunaldi baten lana.

## 6. URTE BAT GEROAGO

Villasantek dioenez (1994: 667), Arantzazuko biltzarra bukatu ondoren, «hango eztabaiden oihartzuna motelduz eta itzalduz joan zen». Gertatutakoaren arrakasta ikusirik, Euskaltzaindiak argitalpen bilduma berri bat («Irakur sail») erabaki zuen ateratzea, eta lehenbiziko liburuak (Euskaltzaindia 1969) Arantzazuko erabakiak bildu zituen: «egungo egunean euskaraz dugun zereginik garrantzitsuena hau dugu: BATASUNA» (5. or.). Izenbururik gabeko sarrera bat badu, non Baionan eta Ermuan egindako bilkurak ekartzen diren gogora.[18] Horrek piztu zuen berriz ere *h*-ren gatazka.

Liburuak atal hauek ditu: «Batasunari buruzko bibliografia», Villasantek egina; Lekuona Euskaltzainburuak Arantzazun egin sarrera hitzak («Euskeraren batasuna»); Euskaltzaindiaren Arantzazuko adierazpena (sarreratxoan ematen dira erabakia hartu zuten euskaltzainen izenak: Lekuona, Intza, Irigarai, Irigoien, Labaien, Lafitte, Mitxelena, San Martin, Satrustegi eta Villasante); Mitxelenak egindako txostena, berriz ere izenbururik gabe; lehenago aipatu dugun «Batasunerako hiztegia», eta, azkenik, Euskaltzainburuaren azken hitzak. Gainerako dokumentazio guztia, Arantzazukoa bukatu eta berehala argitara eman zena, desagertu da liburu honetan. 1970eko uztaileko bilkuran sinatu zen erdarazko argitalpena, eta erabakia berretsi, baina Mitxelenak bultzatutako ohar honekin: «Euskal aldizkari guztietara ohar bat bialtzea puntu batzuk argituaz: a) Arantzazuko batzar hura, Euskaltzaindiarena zela eta ez zenbait idazleena; b) Han irakurritako agiria, bertan ziren jaun euskaltzain osoen harturiko erabakia zela».

---

18. Liburu horrek ere ez zuen irabazi urte hartako argitalpen txukunen saria: Ermuko bilera 1969an egin zela dio (esan bezala, 1968koa da) eta Ermuan batzeko egindako deia biltzen du hitzez hitz. Badakigu non hasten den dei hori, komatxoak markatzen direlako, baina ez non amaitzen den. Inguruneak ere ez du laguntzen horretan. Gauzak okerrago uzteko, liburuaren aurkibideak ez du zuzen ematen barnean aurki daitekeenaren berri.

Argitasun hau eman nahi zen ikusirik batzuek jarri zituzten zalantzak.[19] Eztabaida luzea gertatu omen zen proposamen horren inguruan. Azkenean dena onartu zen. «Bakarrik Lekuona jaunak ohar bat ezartzen du esanaz Arantzazuko erabakia kontseilu erakoa zela eta ez agindu erakoa, Labaien jaunak ere hori uste du» (*Euskera XVII,* 238). Bilera horretan aukeratu zuten Villasante euskaltzainburu, 11 botorekin, eta urrian hartu zuen kargua Maulen, Lekuona «euskaltzainburu zaharra» bera zuela aitabitxi.[20]

## 7. BERGARAKO BILKURA (1978) EGIN ZEN ARTEKO BIDEA

### 7.1. Batasunaren egarria, ase gabe

Arantzazuko bilkura amaitu ondoren euskararen batasunaren aldekoak beren bidea egiten hasi ziren. Gauza anitz zegoen oraindik ere zehaztu gabe, baina lehenbiziko urratsak eginak ziren. Eta belaunaldi berriak irrikitan zeuden, egarri, euskararen batasunaren alde egiteko: «Zer idatzi behar du zerbait esan nahi duenak: *ekarri dabela, ekarri duela, ekarri duala, ekarri dula, ekai dola, ekharri diala, ala ekharri dila*?», zioen Txillardegik, *Zeruko Argian* egiten zioten elkarrizketa batean, 1970ean, 375. alean. Euskara bera sinbolo bihurtu zen Euskal Herrian: euskararen alde egitea beste gauza askoren alde egitea zen edo, nahi baldin bada —eta beharbada zehatzago—, batez ere gauza askoren kontra egitea. Euskararen alde egiten zutenek, euskararen batasuna nahi zutenek, demokrazia nahi zuten aldi berean, eta Franco noiz hilko zen zain zeuden. Haietako asko abertzaletasunean jartzen zituzten begiak, nazio baten alde ageri ziren: ez dezagun atzendu garai hartako manifestazioetan sozialistak ageri zirela Iruñeko karriketan *Nafarroa Euskadi da* izeneko leloa pankarta batean zeramatela. Hori, neurri batean, denborak geroago erakutsiko zuen bezala, irudizko ispilatze hutsa besterik ez zen,

---

19. Egia esateko, gauzak pixka bat nahasiagoak dira. Argitasun hori horrela dator *Euskera XVI*-ko 100. orrialdean (1971). Ondoko urteko *Euskera XVII*-an, ordea, buelta gehiago eman zioten adierazpenari, nonbait, eta orain ez bi, baizik hiru puntu ditu: «a) Arantzazuko batzar hura, Euskaltzaindiarena zela eta ez zenbait idazleena; b) Han irakurri ziren lanak, Euskaltzaindiak Euskaltzaindikoei eskatuak zirela; d) Han irakurritako agiria, bertan ziren jaun euskaltzain osoen artean harturiko erabakia zela» (238. or). Horrela dio bilerako agiri ofizialak.

20. Nonbait, 1970eko Pazko astean elkartu bide ziren Arantzazun lau lagun: San Martin, Satrustegi, Villasante eta Mitxelena. Han erabaki zuten, omen, Lekuonaren ordez hurrengo hauteskundeetan Villasante aurkeztea. Mitxelenak eliza gizon bat nahi zuen, apaiza, indarrean zegoen ezkerretik zetozen guztien aurrean behar bezalako pareta eraikitzeko, eta susmo txarrik ez sortzeko, aski nahasia baitzegoen guztia: «Ez dakit Marxen libururen bat daramazun sotana horren azpian» esan omen zion Villasanteri. Jose Luis Lizundia ere hurbil hartan zegoen, baina gai honetaz hasi zirenean, kanpoko aldera atera zen, berak esan didanez.

baina gauzak hola ziren garai haietan. Baina komeni da oroitaraztea Nafarroako Alderdi Sozialista (PSN) ez zela 1982raino sortu —Euskadiko Alderdi Sozialistatik bereizirik—, bi apaizek, Gabriel Urralburu eta Victor Manuel Arebeloa, zein bere aldetik, bazterrak nahasten ibili ondoren *Ez dok Amairu* taldeak jaialdiak antolatzen zituen bakoitzean jendeak jertseak gora botatzen zituen Carrero Blancoren hilketa gogora ekarriz, euskara eta protesta sistematikoki berdinduz, Xabier Lete zenak hori batere gustukoa ez bazuen ere. Gero lasterka hasi behar izaten zuen eta, biharamunean, haietako asko euskara ikastera joaten ziren. Beste horrenbeste gertatzen zen herriko jaietan, pasodobleetatik musika modernora pasatu bezain laster, beroa egin, edo hotza, zeruaren ilunpea koloretako jertse haiekin betetzen zenean. Beste askok euskararen alde zeudela zioten, baina funtsean ez zitzaien zinez gehiegi inporta, haientzat ere euskara sinbolo hutsa besterik ez baitzen. Baina denak, euskaraz zekitenak eta ez zekitenak, batasunaren alde ziren, nahiz azkeneko hauek zalantzan jartzen zute batzuetan kontua: euskara ikasi gabe bazekiten zer egin behar zen euskara idatziarekin, eta hori betiere gaitasun handia da.

Arazo larrienak Bizkai aldean sortu ziren, herrialde horretako euskaldunek ikusten baitzuten aukeratu batasun eredua sobera aldentzen zela bizkaiera idatzitik. Egia da beste euskalki batzuetatik ere aski urrun zegoela, baina bizkaierazko literaturak tradizio indartsua zuen. Baziren beste batzuk ere aurka ageri zirenak, baina nekez uler zitezkeen argudioekin, non eta argudio horiek beste zerbait ezkutatzen ez bazuten. Berriz ere hemen Txillardegi: «Euskalkietatik euskera osatu eta bakarrera pasa nahi dugunon asmoa, berriz, *traidoreek* asmatutako txaplata omen» (aipatu ale berean). Urte horietan gero eta jende gehiago hasi zen euskara ikasi nahi zuela. Sortu berria zen Bilboko Unibertsitatean hasiak ziren eskolak euskaraz, zailtasun guztiekin, baina hasiak, eta Euskal Herriko Unibertsitatearen sortzea aldarrikatzen zen, eta unibertsitatearekin batera euskara indar handiagoz eramatea eskoletara, eta euskal filologiako ikasketak ere unibertsitatean paratzea. Ezinbesteko zuen jende horrek guztiak batasuna. Baina oraindik *h* letraren auzia zertan geratuko zen ez zegoen argi, irakasleek ez zekiten *hauk etorri dira* edo *hauek etorri dira* erakutsi behar zuten, eta beste erabaki anitz eta anitz hartu gabe ziren. Bitartean, ordea, liburuak argitaratzen ari ziren, gero eta gehiago, eta editoreek arauak eskatzen zituzten. Denak bil-bilean segitzen zuen.

### 7.2. Bultzatzaile batzuk

Txillardegi izan zen berriz ere batasunaren bultzatzaile nagusietako bat urte haietan: 1970ean argitaratu zuen *Sustrai bila* eta 1974an atera zuen *Euskara batua zertan den* izeneko liburua, non biltzen baitzituen Euskaltzaindiak hartutako erabakiak. Alfabetatze lanetarako tresna egokiak izan ziren. Ezin ahaztu, ordea, aise lehenago,

1957an, argitaratua zuela *Leturiaren egunkari ezkutua* eta ondoko urtean *Peru Leartzako*. Arantzazukoa bukatu eta berehala etorri zen liburu dendetara *Elsa Scheelen* (1968). Eta hizkuntzaren inguruan *Euskal Gramatika* (1978), *Euskal Aditz Batua* (1979) eta berehala, nire ustez askoz ere apalagokoa den *Euskal Fonologia* (1980). Liburu hauetan esaten diren gauza askok eztabaidak piztu dituzte espezialisten artean, baina bistan da garai hartan euskal irakurleen artean eragin handia izan zutela. Txillardegirekin batera ezinbestekoa da Xabier Kintanaren *Hiztegi Modernoa* (1977) aipatzea. Eztabaidak eztabaida, horiek guztiak zinezko ikonoak ziren garai hartako euskaltzale gehienentzat. Eta gaztelaniaz idatzirik ere nekez atzenduko ditugu hemen Villasantek (1970, 1972, 1974, 1976, 1978, 1980a, 1980b, 1986, 1988) Eleizalde sailean argitaratutako lanak batasunaren inguruan, nahiz berak Axularren lana hartzen zuen ardatz.

Eztabaidak *h* letraren inguruan bildu ziren batez ere. Adierazgarria da, garai hartako borroken adierazle gisa, José Estornés Lasak 1973ko urtarrilaren 6an bidali zion eskari iluna Euskaltzainburuari (Euskaltzaindia 1974, 389) 10 argitaldariren izenean: «Oraiñaldi ontan, aldizkarietan, liburuetan eta gaiñerako idaztietan dabillen ortografinaasketa ikusirik, Elkarte Agurgarri orrengana gatoz eskean, egoera naasi au argitu ta zuzendu dezan; jakiña, idazle, inprimeri ta argitaldariak izan dezazketen eskubideak gutxi-etsi gabe».[21]

Eskariaren iluntasuna Euskaltzainburuak ematen dion erantzunean argitzen da: «*H* letraren ortografiaz ari da: Euskaltzaindiak *h* gabeko idazkera erabaki zuen eta erabaki hori ez du sekula deuseztatu. Beraz idazkera hortara bihur dadila eskatzen zaio, 1968ko agiri hura baztertuz». Eskaria, Euskaltzainburuak eman erantzuna eta idazkariordeak jarritako eranskina Euskaltzaindiaren osoko bilkuran irakurri ziren. Erantzuna biziki gogorra da, Akademiak dituen usadioetarako: «… egileak ez daki, nunbait, Euskal Herria bai mugaz hemengo aldean eta bai mugaz beste aldean ere badela. Eta Euskaltzaindia Euskal Herri guztirako dela». Buruak oroitarazten du letra hori batzuek eta besteek erabili izan dutela tradizioan, eta orain urte batzuetako epe bat eman behar dela ikusteko nolako harrera duen Hegoaldean, hori ez dela inolako nahasketa, eta ez dela erabilera horretara inor ere behartzen:[22] «Bakoitzak bere txokoko aho hizkerari bakarrik kasu eginez idatzi nahi duenean, orduantxe sortzen da nahaspila, nahaspila ikaragarria, aho hizkera tokitik tokira desberdin izanik». Villasante ez zen zurikerietan ibili erantzunean.

---

21. Egia esateko, distantzian irakurririk, eskaera bereziki iluna gertatzen da. Ez baita ongi ulertzen zer eskatzen den, eskatzen den horrekin: a) «1968'ko Ortografia(eragotzia ez dena) berriz indartu ta baietsi» eta b) «2) eta 3)-an datozen *Argibideak* (onelako naaspilla sortu dutenak) eragotzi»

22. Praktikan hau ez zen, ordea, guztiz horrela: argitaletxeek luma zorrotzak jarri zituzten berehala editore lana egiten, Euskaltzaindiaren erabakiak bete zitezen.

Eta hark esana Akademiaren idazkariak[23] bederatzi puntuko idazkiarekin josi zuen azkenik kontua: «Ene ustez hutsik nabarmenena da, [eskaria] editorialak ez dutela firmatzen, Jose Estornes Lasa jaunak baizik», «izkribuan ez da agertzen Jose Estornes Lasak ze editorialetan parte duen eta ze kargurekin», «ez dakigu egiaz ari den ala ez», «eta kasua da ez dela denekin egiaz ari, zeren Jose Mª Martin Retana jaunak […] esan du, neri esan zidan aipatzeko, berak ez duela firmatu horrelako izkriburik, nahiz eta aurkeztu ziotela egia bada ere».

### 7.3. Aditzaren batasuna

Geroko utzia zen aditzaren batasuna egitea, aditz laguntzailearen batasuna, hain zuzen ere: «batasunaren bidean aurki genezakeen behaztoporik bihurriena», Mitxelenaren hitzetan (Euskaltzaindia 1973: 5). Baina berehala ikusi zen gai horrek ere presa handia zuela eta horixe zela berehala egiteko lan berria. 1970eko iraileko bilkuran Txillardegiren gutun bat irakurri zen, aditz batuaren arazoak aipatuz. Urak nahasiak zetozen: «Etxaniz jaunak berak ere zerbait esan beharra baduala esaten du. Baina har-emanei jarraituaz, Etxaide jaunak bidalitako beste gutun bat irakurtzen da Etxaniz jaunak berak *Zeruko Argia* asterokoan Euskaltzainburu berria autatzeari buruz egin duen artikulua, gero *Agur* hilerokoak kopiatuaren aurrean Euskaltzaindiak zerbait egin behar lukeela eskatuaz. Jarraian Etxaniz jaunak idazki bat irakurtzen du Euskaltzaindiaren oharra, batasuna, h-a eta beste pundu batzuk aipatuaz. Eztabaida garratz bat sortzen da eta ezer erabakitzeko modurik ikuzten ez zalarik moztutzen da eztabaida eta beste gai batera pasatzen da» dio egun horretako Euskaltzaindiaren bilerako agiriak (Euskaltzaindia 1972: 241). Idazkariak aipatzen du Oregi jaunaren aditz batuari buruzko txostena ez dela iritsi, baina badela Aresti eta Kintanaren beste lan bat. Hori guztia aztertzeko hoberena batzorde bat izendatzea izango litzatekeela. Euskaltzaindiak bilera horretan berean deliberatu zuen batzordea izendatzea[24] arazo horri irtenbidea emateko (idem).

Batzordea 1970eko azaroko bilkuran eratu zen (Euskaltzaindia 1971: 130). Batzordeak bazuen Atal Eragile bat Mitxelena (buru), Altuna (idazkari), Lafitte, Epherre eta Berriatuak osatzen zutena. Batzordearen kontseilariak ere izendatu ziren: Intza, Lafon,

23. Izenik ez dator. Ez dakigu erantzuna norena den: idazkariarena (testu hasieran dioen gisan) edo idazkariordearena (honen berri ematean aurreko orrialdean esaten den bezala). Segur aski ere, idazkariaren erantzuna izan zen.

24. Aitortu behar da haizearen kontra zebilela Euskaltzaindia. Esan ohi da arazo bat konpondu nahi ez bada batzordeño bat eratzea izaten dela hoberena. Bada, Euskaltzaindiarekin alderantziz gertatu da bere historia osoan: batzordeek egiten duten lanari esker aurreratu da. Eta aditzaren batasunarekin ere gauza bera gertatu zen.

I. Omaetxebarria, Intxausti, Aresti, Kintana, Baztarrika, Oregi, Txillardegi, Iraizoz, Akesolo, F. Mendizabal eta Jon Etxaide. Arazoek, hala ere, ez bide zuten konponketa erraza: abenduko bileran idazkari ordeak zioen Arestik telefonoz jo ziola eta aholkulari izateari uko egiten ziola.

Patxi Altunari eskatuko zion handik urte batzuetara euskaltzainburuak batzorde horren historia konta zezan. Hori egin zuen Altunak (1977: 667-672) Euskaltzaindiko bilkura batean 1975eko uztailaren 29an: «1971garren urteko udan bertan, batzordea izendatu eta egun gutxitara, hasi ginen lanean, lehen bilera Baionan egiten genuelarik» (668). Baina hori ez da oso zuzena, nonbait, batzordea sei hilabete lehenago izendatu baitzuten. Gero bilkura gehiago egin zuten: Donostian, bi aldiz; Arantzazun, 1972ko uztailean, eta Bilbon 1973ko apirilean.[25] Berak kontatzen duenez, lagun askoak huts egiten omen zuten bileretara, baina elkartzen zirenek adosten zituzten adizki zerrendak besteei ere helarazten zizkieten. Bi joera nabarmendu omen ziren: batetik, «jatortasun-aberastasunak zernahiren gaindik gorde nahi zituztena eta euskal aditz laguntzaile osoa inoiz izan dituen eta izan ez dituen, baina izan zitzakeen, forma guztiekin (baita hitanozkoekin ere) berehala batu nahi zutenena» (669. or) eta bestea «eguneroko premiari besteek baino gehiago, ustez bederen, begiratuz, formarik erabilienak, maizenik ahotan eta lumatan jartzen ditugunak, finkatu nahi zituztenena, hitanozkoak ordukoz baztertuaz». Nork hitz egiten zuen —azaltzen du Altunak—, batzuek euskal aditz laguntzaile sistema osoa, aditz aberatsa, joria eta ugaria nahi zuten, eta beste batzuk, berriz, batez ere bizirik zeuden formak biltzearen alde ageri ziren. Ikustekoa da elkarren artean gorabeherak izan zituztela, edo Altunak bederen izan zituela besteren batekin. Zeharka-meharka bada ere, barrokismo anitzez jositako eta apaingarriz betetako bere prosa horretan esaten du zenbait lagunek ez zutela gogoko Mitxelenak aukeratutako sistema, aitzinetik hartara makurtuko zirela esana bazuten ere («behiala [onartuko zutela] zin egin bazuten ere»). *Batasunaren Kutxa* hartzen du lekuko, eta haren bi egileak salatu (Aresti eta Kintana), baina izenik eman gabe.[26] Eta berehala Txillardegik

25. Altunak dio 1972ko abenduan ere izana zela beste bilera bat Bilbon, baina lau lagun bakarrik agertu zirenez bertan behera utzi zuten: «besteok ez genuen deia garaiz hartu». Holaxe dio, nork eta batzordeko idazkariak berak (668. or).

26. Xabier Kintanak 1976ko azaroaren 26an erantzun zion (1979), nahiko haserre. Altunak bere txostena irakurri zuenean, omen, Berriatuak eta Kintanak eskatu zioten Altunari, zuzenean batzordearenak ez ziren kontuak aipatu baitzituen, eta Aresti hildakoaren protagonismoa ere ez modu egokian ekarri baitzuen denen gogora, puntu batzuk ken zitzan, horrela ager ez zitezen geroko historian. Baina lana irakurri zuen gisan agertu zenez *Euskera* agerkarian, ezadostasuna utzi zuen agerian Kintanak, eta tartean ibilitako zin egite haien kontuak beste ikuspuntu batetik argitu zituen. (Euskaltzaindia 1979: 381-383). Urak, nolanahi ere, aski nahasiak zebiltzan.

Villasanteri egin gutunak ere aipatzen ditu, Mitxelenaren irizpidea, zinak goiti-beheiti, ontzat hartzen zuela baieztatzen zutena, eta abar. Eta segitzen du: «Horiek horrela zirela, eta zinak zin, lanari ekin genion […barrenen genuelarik…] halako gudu aurreko momentuan soldaduek somatzen omen duten larriduraz eta zalantza larriaz: nor aterako ote da garaile?» (670. or). Ustez errazen ziren formek ere buruhausteak sortu zituzten: *zarete/zarate; zineten/zinaten; genuen/genduen; dadin/dedin; dit/deraut/daut,* eta abar. Lan zaila eta nekeza izan zen. Aldeko eta kontrako arrazoiak «aditzen genituen —edo aditzen saiatzen ginen behintzat», eta bat etorriz gero, forma hura hartu. Bestela, botoetara, argudio ezin zientifikoago erabiliz, horrela erabakitzen baitira azkenean kontu hauek hizkuntza akademietan (ez da holakorik gertatzen, eskerrak, grabitatearen indarraren ondorioez eztabaidatzen denean). «Jendeak, gazte jendeak batipat, egin dion harrera ona gogoan hartzen badugu, esan dezakegu ez genuela denbora alferrik galdu» (672. or). Beharbada gehiegi aurreratu naiz.

1971eko apirileko bileran Aresti, Berriatua eta Kintanaren gutun bat irakurri zen: aditz batasunaren egin beharra aipatzen zuten. Hogeita hiru aditzen «konjugazioa» eskatu, eta beren proposamendua eskaintzen zuten aldi berean. Euskaltzainek, kontua aditz batuaren batzordearen esku uztea erabaki zuten. Lehenago ezezkoa emanik ere, bilera horretan Arestik onartu zuen berriz ere aditz batuko batzordearen kontseilari izatea. Maiatzean, pentsa kontua nola zegoen, denen ahoan, aditz batuaren arazoan lehiaketa batek sartu zuen muturra, gaurko telebistako programa bat balitz bezala: «Aditz batuaren batzordeko direnak, HEGOSA-k antolatutako aditz sariketa lehenbait-lehen erabakitzea komeni dela esan da» (Euskaltzaindia 1972: 264).

1971eko iraileko bilkuran berriz ere aipatu zen aditz sariketaren kontua, eta saria emateko mahaia izendatu zen: Lafitte, Txillardegi, Berriatua izendatu zituzten mahaikide. Azkenean, azaroan eman zen aditz batuaren saria, 75.000 pezetakoa, eta Krutwig izan zen aho batez saritua: «Krutwig jaunak ditu bakarrik bete jarri ziren baldintzak, formak hautatuz, erranez bere hautuaren arrazoiak, bere burutik formarik ez asmatuz. Izan dira segur lan eder baliosak aditzari buruz, baina baldintzez kanpokoak. Adibidez Alvarezek eta Lafittek uste dute Jean Eppeherrek Zuberoako aditzaz egin duen lanak merezi lukela nunbait agertzea, gutik ezagutzen baitute zoin den berezia eta zabala» (Euskaltzaindia 1972: 277). Horrela, Krutwigek lortu zuen kontsolamenduzko sariarekin hornitzea bere proposamena: euskaltzainek, handik gutxira, beste eredu bat aukeratuko zuten estandar gisan. Abenduan berean eman zuen Mitxelenak osoko bilkuran aditz batuaren gaineko lehenbiziko txostenaren berri, eta gaia zatika lantzeko asmoa zutela esan zuen.

1972ko urtarrilean aditz batuko batzordeak prestatutako lehenbiziko bi zatiak banatu ziren euskaltzainen artean, eta hilabeteko epea eman zitzaien oharrak egiteko. Apirilean aztertu zen aditza. Zail ikusi zen batasuna egitea «deraut/deust» sistemetan, eta pentsatu

zen beharbada egokiago gerta litekeela bi bide eskaintzea (Euskaltzaindia 1973: 257), idazleek berek egin zitzaten aukerak. Ekaineko bilkuran euskaltzainburuak proposatu zuen aditz batuaren batzordeak bilera berezi bat egitea ondoko hilabetean Arantzazun. 27-29 tartean egitekotan geratu ziren. Ez zen, ordea, aditzaren kontua euskaltzainek esku artean zuten gai bakarra. Egun horretan eman zitzaien euskaltzainei, «Zortzi urterarteko eskola hiztegia» dela eta, gai horretaz egiten ari ziren lanen berri.

1972ko uztailean aztertu zen bigarren aldiz aditz batuaren inguruko oinarrizko proposamena, eta bileran ziren euskaltzainek aho batez onartu zuten: «Ikusi direnak lirake, Euskaltzaindiaren iriziz, oraingoz euskera idatziaren batasunerako aditz jokorik egokienak. Batasunari begira hartzen da, beraz, erabaki hau, euskalkiei dagozkien forma bereziak arbuiatu gabe» (Euskaltzaindia 1973: 267). Agiria honako hauek sinatzen dute: Villasante, Haritxelar, San Martin, Diharce, Irigoien, Mitxelena, Satrustegi (euskaltzainak), Altuna, Berriatua, Intxausti, Kintana eta Lizundia (batzordekoak). Baina iraileko bilkuran, badaezpada, berretsi zen erabakia, eta «dudagatik alde batera uzten diren aditzen berri ematen da» (idem, 271). Aho batez oraingoan ere, bilerara joan ezin izan zirenen boza ere kontuan hartuz: Arrue, Dassance, Diharce, Eppherre, Larzabal, Lekuona, Lojendio eta Mitxelena. Aldi berean, zortzi urterarteko hiztegian aurkeztutako 339 hitzetatik 100 onartu, eta gainerakoak eztabaidarako utzi ziren.

1972ko azaroan aukeratu zuten berriz ere Villasante euskaltzainburu gisa. Euskaltzaindiaren apustua batasunaren alde gero eta argiago gertatu zen horrela: lau urteko epean bidearen zati ederra kurritu zuen Akademiak. Ondoko urtean, 1973an, bilera gehiago egin ziren adizkien gaia sakonago aztertzeko: Bilbon, apirilaren 6an eta 7an, eta Donostian, uztailaren 27an. Azkeneko bilera horretan geratu ziren erabakiak aditz laguntzaile batuaren forma guztiak,[27] aho batez: 15 boz alde eta 0 kontra. Batasunak beste urrats handi bat egin zen horrela. Mitxelena: «Euskaldunok dugu orain hitza» (Euskaltzaindia 1973: 8)

Euskaltzainek, aditzaren batasunaz gain beste zenbait kontu ere aztertu zituzten garai horretan. Aipatu dut dagoeneko zortzi urterainoko hiztegia. 1970eko abenduan euskaltzainburuak «Idatz arauen batzordea» sortzea proposatu zuen: «azaleko gauzetan oinarriak finkatzea» izango litzateke haren zeregina. Hauek izan ziren batzordekideak:

---

27. Euskaltzaindiak liburu berezi bat atera zuen erabakiarekin: *Aditz laguntzaile batua*. Liburu hori *Euskera XVIII,* 1973ko agerkarian dago bildua. Mitxelenak berak zalantzak agertuak zituen hain delikatua gerta zitekeen kontu honekin, baina laster konturatu zen erantzunen baten zain zegoela jendea: «Gero ikusi dut, ordea, non-nahi nabari zen eskea eta entzun nondik-nahi zetorren deia, ez baitira guti izan prestatzen ari diren liburu eta idazlanetarako gidaritza bila hurbildu zaizkigunak: nahiago zuten, dirudienez, gidaritza eskasa inolako gidaritzarik ez baino» (Mitxelena 1973a: 6-7).

Lafitte, Berriatua, S. Garmendia eta Villasante. Kontseilariak: Txillardegi, Kintana, J. Etxaide, Erkiaga, Lekuona, Irigarai, O. Apraiz eta Satrustegi. Berriz ere Mitxelena izendatu zuten batzordeburu. 1971ko maiatzean aurkeztuko zuen batzordeak bere lana: «Puntuazio marka batzuk, non, noiz eta nola jarri» (Euskaltzaindia 1971, 150). Abuztuan aurkeztu zen bigarren partea, eta eztabaidatu: «Idatz-arauen batzordeak prestatu duen txostena (II), Loturik ala bereiz idatzi behar diren hitz, aurrizki eta atzizkiak». Eta irailean, aztertu gabe gelditutako azken puntuak.

Politika giro nahasiaren kontuak ere ezin ziren baztertu urte haietan: 1970eko batzar horretan, adibidez, Burgosen heriotzara kondenatu zituzten euskaldunen biziaren alde zerbait egin beharra zegoela aipatu zen, eta estatu buruari telegrama bat egitea erabaki zen azkenean, hitz hauekin: «Academia Lengua Vasca, reunida sesión académica Pamplona, suplica clemencia procesados Burgos» (Euskaltzaindia 1972: 250 (http://www.euskaltzaindia.net/dok/euskera/51946.pdf).

1971ko Martxoko bilera Donostian egin zen, eta Gipuzkoako gobernadorea agertu zen hara eta «Euskaltzaindia hizkuntz honegatik egiten ari dena txalotu» zuen (Euskaltzaindia 1972: 257). Garaiak aldatzen ari ziren pixkanaka.

Esan bezala, 1973an argitaratu zuen Euskaltzaindiak euskal aditz laguntzaile batuaren eredua, albo batera utziz trinkoen paradigmak eta alokutiboarena.[28] Aldi berean, Villasantek (1994: 667) dioen gisan, Euskaltzaindiak hamar urteko epea emana zion bere buruari Arantzazun adostutakoarekin zer gertatzen zen ikusteko. Eta hamar urteren buruan biltzarra egingo zuela.

## 8. BERGARAKO BATZARRA

Horrela antolatu zen Bergarako batzar irekia, Eleizalderen omenez, Euskaltzaindiaren zortzigarrena. 1978ko irailaren 4an hasi zen, eta 8an bukatu. Satrustegi izan zen batzarreko burua. Ardura akademikoa Hizkuntza batzordeak hartu zuen (Mitxelena, Akesolo, Haritxelar, Iraizoz, Irigarai, Irigoien, L. M. Mujika, Kintana, Lafitte, J.A. Loidi, Oregi, Sarasola eta M. Zarate, J. A. Letamendia zela idazkaria) batez ere, nahiz baziren beste bi batzorde (soziolinguistikakoa eta antolakizunekoa). Villasantek berak argitzen du zortzigarren biltzar horren zergatia sarrera hitzetan:[29] «*Biltzar* izen hau hautatu dugu, pixka bat ohiturari jarraikiz, zera adierazteko: Kongresu ageri eta ospetsua, euskal gaiak

28. Adizki alokutiboen eredua 1994ko azaroaren 25ean onartu zuen Euskaltzaindiak (ik. 14. araua http://www.euskaltzaindia.net/dok/arauak/Araua_0014.pdf)

29. Sarrera horretan hainbeste gai ukitzen ditu Villasantek, eta berriz ere bere jakituria erakusten digu. Holako zentzu komuna zuten pertsonei esker egin ahal izan da batasuna gure hizkuntzarekin.

aztertzeko eta gai hoietaz iritziak entzun eta eztabaidatzeko» (Euskaltzaindia 1978, 441).[30] Gaia, batasunaren ingurukoa berriz ere. Jakin nahi zen Arantzazuko arauek nolako harrera izana zuten euskaltzaleen artean, eta puntu hori aztertu nahi zen bilkura hartan. Villasantek hasieratik utzi nahi du argi, hala ere, zeri deitzen zaion «euskara batua», zeren ikusten du nahasteak daudela hitz hauen azpian.[31] Hitz harro (eta haren ustez ez oso egoki) horien azpian dagoena aski xumea da: hizkera estandar eta arrunt bat, akordioz eta konbentzioz bateratua. «Euskara hizkuntzak —dio Villasantek— eduki dezala forma bat bateratua, irakaskuntza eta idatzizko zereginetan batez ere erabilia izateko».

Bitzar irekia zen eta, batzordeek sortutako «hitzaldiez» gain, «txostenak» aurkezteko aukera ere ematen baitzitzaion gai hauen inguruan zerbait esateko zuen orori, bereizketarik egin gabe.[32] Batzarrak utzitako liburua aztertzen baldin bada, ez da ongi ikusten zer den hitzaldia eta zer txostena: batzuetan espresuki esaten da zer den, baina beste batzuetan ez da deusik ere zehazten. Dena, aldez aurretik markatutako arau batzuk errespetatuz gertatu zen.

### 8.1. Mitxelenaren hitzaldia

Lehenbiziko egunean, Elkoro alkatearen hitzen ondoren, Villasante (Euskaltzainburua), Satrustegi (idazkaria) eta Koldo Mitxelena mintzatu ziren. Biharamunean Martin Ugalde, Joan Mari Torrealdai, Xabier Mendiguren Bereziartu, Andoni Sagarna eta Mikel Zaratek hitz egin zuten.

Mitxelenak eman zion hasiera akademikoa batzarrari «Arantzazutik Bergarara» izeneko mintzaldiarekin (ik. Euskaltzaindia 1978, 467):[33] «Ez nator inondik ere harro eta arrandiaka, Arantzazun, duela hamar urte, egin zen balentriagatik. Are guttiago, ordea, orduko eta geroekoen lotsaz eta ahalkez. On ala gaitz den ez dakit, baina hangoa ez zen izan asanblada trumoitsu eta nahastekaria, besteren ahoz mintzatzen den baten batek dioen bezala. Istiluaren larriak eta gure barren suminduak eskatzen zuenaren

30. Batzarreko dokumentu ofizial guztiak liburu horretan bildu ziren.

31. Nire ustez, nahaste hauek ez dira inoiz ere konpondu, zoritxarrez: anitzek segitzen dute pentsatzen, urteak pasatuta ere, euskararen batasuna euskalkien kontrako zerbait dela eta, esaterako, «hemen bertan» esan behar dela, hori dela batasuna, eta ezin dela «hemen berean» esan. Noizbait «batasun formala» (Euskaltzaindiak eman arauek osatzen dutena) eta «batasun soziologikoa» (gehienek erabiltzen duten euskara landua) nahasten direla idatzi nuen. Baina bi gauza dira. Funtsezko ideia: batasun formal hori ahalik eta gehien osatu behar da euskalkiek gure esku jartzen duten aberastasunarekin.

32. Matrikula hogei aldiz garestiagoa zen Arantzazun baino: 1.000 pezetakoa.

33. Inprenta huts bat dela eta, gaizki eman zitzaion zenbakia. Ik. bibliografia.

gainetik ez zen gehiegi igo, nik uste. Bakezaleak, gainera, aurrean behar genituzke, ez urrutiko bazterretan, baketzaile bihurtzeko egokiera dutenean». Guztion gogora ekartzen du nola diren, hemen eta han, hizkuntzalariak beti hizkuntzen batasunaren etsairik amorratuenak, batez ere hizkuntza hori besterena denean. Baina oro har, aski baikor ageri da Arantzazun egindakoaz eta geroztik gertatutakoaz, anitzetan noraezean hartu baldin badira ere, hartu, erabaki batzuk ezinbestean, gure burua galdurik ikusi dugunean bidegurutze batzuetan. Egia da arazo handiak izan direla, eta gatazka sortu dela, baina Mitxelenaren ustez, urte horietan gertatutakoan ez da inolako bitasunik ageri: ez da egia batzuk batasunaren alde, eta beste batzuk kontra daudela, kontra daudenen artean, aurrekoekin gertatzen ez den bezala, jarrera aski desberdinak ikus baitaitezke. Eta batasun bila aritzeak beti sortuko ditu arazoak: «Sorterrian nahiz atzerrian, batasun bila abiatzen denak ez du sekula atarramendu onik aterako: bereizkuntza mingots eta mingarria sortuko du, berehalako batean. Ezagunegia da harako bi Aita Saindu zireneko hartan gertatu zena. Hirugarrena hautatu zutela, lehenbiziko biak desizendatu ondoan, eta hona non aurkitzen diren hiru Aita Saindurekin, lehenengo biak aski ez bazituzten» (Euskaltzaindia 1978: 470). Hori gertatu izan da hizkuntzaren estandar bat sortu nahi izan den toki eta hizkuntza guztietan. Mintzaldian zehar berriz ere euskararen batasunaz eta historian proposatu izan diren ereduei buruzko oharrak egiten ditu, aldarrikatuz, hori bai, Euskaltzaindiak egin lanak merezi duela batzuek aitortzen dioten maila baino zerbait gehiago. Eta agerian uzten ditu, behin eta berriz, baina gehiegi saltsatu gabe kontuarekin, batasunaren aurka daudenen inkoherentzia eta barneko kontraesanak.

### 8.2. Ugalde, Torrealdai, Mendiguren eta Sagarna

Ugaldek, Torrealdaik, Mendigurenek eta Sagarnak Arantzazun proposatutako ereduak ondoko hamar urteetan izan zuen arrakasta zehatz-mehatz neurtzen saiatu ziren haien hitzaldietan. Harrigarria da, benetan, arrakasta hori, eta urteek ematen duten distantziak hobeki laguntzen du balorazioa egiten. Gertatutakoa neurtzeko inkestak bidali zitzaizkien idazleei eta ikastoletako zuzendariei, eta urte horietan argitaratutako liburu eta aldizkarietan erabilitako euskara mota, batasunari dagokionez, aztertu zen. Idazle gazte asko hasia zen urte horietan idazten. Saizarbitoriak, esaterako, 1969an atera zuen *Egunero hasten delako*, eta 1976an jendeak besapean eramaten zuen *Ehun metro.* Inkesta erantzun zuten idazleen artean (eta osatu ahal izan zen zerrendako guztiei bidali zitzaien) %60 baino gehiago hasi ziren idazten 1968-1970. urteen arteko epean, hots, Arantzazuko bilera egin zen garaian edo berehalaxe. Idazle guztien artean, %66,8 batasunaren alde zegoen eta taxututako ereduaz iritzi «ona» edo «oso ona» zuen. Gutxik (%4,6) eskatzen zuen atzera itzultzea. Hamar urte horietan argitaratutako liburuen azterketa xehea egin zen 431 liburu eta 36

aldizkari aukeratu zituen Torrealdaik, lagin bat eginez. Zernahi gisaz, 1967an (biltzarraren aurretik), 1972an (Arantzazutik bost urtera) eta 1977an (hamar urtera) argitaratutako liburu guztiak espresuki kontuan hartu zituen, laginik egin gabe urte horietan. Eta datuek ez dute leku gehiegi uzten interpretazio ilunak egiteko: hizkuntzaren barneko zenbait adierazle (*h* letraren erabilera, ergatibo plurala, aditz formak, eta abar) aztertu ondoren, argi ikusten da adierazle gehienetan idazleek orpoz orpo segitzen dutela eredua, arruntean adierazle bakoitzean % 90etik gorako segida eginez (batzuetan % 100).

«Hego Euskadiko» 570 irakasleri eta ikastoletako 99 zuzendariek ere bide bera hartu zuten, ezbairik gabe: irakasleen artean % 90,9k euskara batua erabiltzen du han ez bada hemen, baina % 62,3k beti erabiltzen du batua, irakurtzeko, idazteko eta hitz egiteko, eta % 89k beharrezkoa dela dio; ikastoletan, % 79k hartua du erabakia euskara batua erabiltzeko ikastoletan. Zuzendariek (% 66) euskal testuak eskatzen dituzte, eta irakasleen prestakuntzaren beharra aldarrikatzen dute (% 81). Prestakuntzaren beharra lotua dago, segur aski ere, informazio faltarekin, hori ere aipatzen dute irakasle eta zuzendariek iritzi guztietan, ehuneko handi batean gainera (% 56,1-% 75,8, xehetasunen arabera). Eragozpen larrienak Bizkai aldetik datoz berriz ere.

Euskalduntze eta alfabetatzen kontuetan, datuek erakusten dutenez, % 83,6k batasunaren beharra aipatzen du.

Hori izan zen Mitxelenak landu eta proposatutako ereduaren arrakasta izugarria. Hamar urte horiek bideratu zuten betiko euskararen estandar idatzia. Eta nola, gainera. Jendea batasunaren alde jarri zen, ez liskarrik gabe, baina alde; ez zen hura, ez, eredu itxia, baina denborarekin osatzeko bidean jarri zuten aitzindari haiek betiko: «Esan ta egin, jarri genuen euskara batasun bidean. Eztabaidaka, haserre bizitan, garrasika, behaztopaka, aurrerakadaka eta atzerakadaka…, baina jarri genuen batasun bidean. Batasun bidean jarri genuen eta batasun bidean dugu oraindik. Batu ez dugu egin, jakina, *euskara batua* baturik dagoen euskara bat bezala behin eta berriz ahotan erabili arren. Hain zuzen ere, ez dut uste inongo hizkuntza batu bizirik, komunikabide jator izateko gai den hizkuntza batu bizirik, hamar urtetan batu denik, eta batu daitekeenik ere ez. Hala ere, batasun bidetik euskara baturantz goazelarik, jo ta ke gabiltzalarik, nahiz eta batzuetan itsumustuka ta nahasteka-mahasteka ibili, askok uste duen baino gehiago lortu dugu» zioen Mikel Zaratek bere hitzaldian (Euskaltzaindia 1978: 557). Belaunaldi oso baten meritu ikaragarria eta ez behar den bezala aitortutakoa izan da hori.[34] Inoiz ez bezalako kontzientzia berri batek hartu zuen tokia pixkanaka:

34. 2012an jaso zuen Ibon Sarasolak Euskadiko Ikerkuntza saria, ongi jaso ere, bere merezimendu pertsonalengatik. Orain arte gizarteak sobera baloratu ez duen belaunaldi oso horri eskaini nahi izan zion saria.

1959ko hitz zerrenda, Baiona (1964), Ermua (1968), eta Arantzazu (1968).[35] Eta orain Bergara.

### 8.3. Zarate

Zarate aipatu berri dut. Interesgarria izan zen, biziki interesgarria, haren hitzaldia ere. Garai hartan, Zarate zenak pixka bat noraezean bezala uzten gintuen batzuetan:[36] batuaren alde zegoen? aurka? Guretzat euskara batua besterik ez zegoen, hura zen erreferentzia bakarra. Hartara eraman gintuen urte haietako giroak. Zaratek aski argi utzi zuen bere jarrera, berak zekien bezalako euskara arin eta dotore hartan. Batasuna, bai, ezinbestekoa. Egin, egin behar da. Ez, ordea, edozein modutara: ongi dago tradizioan errotzea, horrek hala behar du izan, baina ezin dugu bazter batean utzi benetan herrian erabiltzen den hizkera,

---

35. Garai hura nork bere erara bizi izan zuen. Batzuk protagonista zuzenak ziren; beste batzuek bazterretik ikusten zituzten gauzak, prozesuan zuzenean inplikatu gabe; beste zenbaitek urrunagotik oraindik, eta bazen jende asko enteratu ere egin ez zena. Euskaltzaleok (garai hartan euskaltzaletu nintzen ni) pentsatzen genuen mundua gurea zela, baina denborak erakutsi digu hori ez dela hola. Soziologia ikasketak egiten ari nintzen orduan Deustuko unibertsitatean. Bi aldiz egon nintzen Burgosen, ikusle gisan, ETAkoen aurkako prozesu famatu hartan, 1970eko neguan. Deustuko unibertsitatean bazen Legorretako taldetxo bat, aski borrokalaria. Haietako bat hasi zen gauetik goizera euskara irakasten unibertsitateko areto batean eta multzotxo bat joaten ginen eskoletara, denak nahaste. Denak nahaste, diot, euskaraz genekienak (beti euskaraz egin izan genuenak, nork bere hizkeran) eta euskaraz tutik ez zekitenak ere gela berean sartzen baikinen. Irakaslearen izena Juan Mari Jauregi zen. Eta hara non hasten zen: «Zer da hau?» Eta nik harriturik behatzen nion: «Orko oi? atia! Ze izein da ba?». Eta nire ondokoak: «Pues eso… no sé». Denborarekin Maixabelekin ezkonduko zen Juan Mari. Maixabelen anaia ezagutzen nuen nik, Legorretako talde berekoa baitzen, gelakidea, Joxe Angel Lasa, gaur egun eskultore ezaguna eta EHUko irakaslea dena. Denbora gehiagorekin, Juan Mari Gipuzkoako gobernadore izendatu zuen PSOEk. ETAk tiro bat emateko eta bertan uzteko denbora gehiago behar izan zuen oraindik. Ameriketan nengoela jakin nuen. Euskararen batasunak baino zirrara handiagoa sortu zidan bihotzean.

36. Aitortu behar dut estimu eta esker berezian dudala Mikel. Deustuko unibertsitatean ezagutu nuen, euskal filologiako ikasketak egiten ari nintzela, eta, aldi berean, Deustuko Hizkuntza Eskolan, hango titulua ateratzeko eskoletan nengoela. Bietan nuen irakasle. Mundu bat ireki zidan, eta aho zabalik utzi ere euskara landu eta ederra entzuten hasi nintzaionean, lehenbiziko aldiz nire bizitzan. Urte haietan zen. Halako batean, bihotzeko batek eraman zuen. Eta orduan neska gazte bat etorri zitzaigun eskolak ematera Deustura ikasturte erdian: Miren Azkarate. Egia esateko, gustua ematen zuen, ikusirik bagenituela beste irakasle batzuk ikasleok eserita geundeneko puntutik metro pare bat gorago begiratzen zutenak eskolak emateko orduan. Paretari hitz egiten zioten, edo gu ikusteko gauza ez ginen gure gainean zegokeen eta asmatu ezin genuen beste zerbaiti.

hizkera hori leku batetik bestera aldatzen bada ere, eta Bermeon Bermeokoak bakarrik balio baldin badu ere. «Euskara» da izena, eta «batua», ostera, adjektiboa. Euskaraz jakin behar da. Hortik abiatu behar dugu, nahitaez. Euskara goimailaratu behar dugu, baina hori ezingo da egin liburuetara bakarrik joz, edo «logikaz» eraberritu eta indarberrituz (hitz hori apropos aukeratu zuen, segur naiz). Horregatik, euskaldunak alfabetatzen hasi behar dugu, zein bere hizkeran. Hori da abiapuntua, gauzak ez baititugu zuzen egin: «konturatuta edo konturatu barik, herriko hizkuntza bizi koloretsutik alde egin dugu gehienetan (Euskaltzaindia 1978, 562)». Euskara batua ezin da euskara biziaren kontra joan. Eta hor ortografia bakarra erabili behar dugu. Horrela pasatuko gara Lezamako «etortexinzen dekartezeuen» (alemana ote den galdetzen du) «etortzen izan zen eta ekartzen zuen» esatera. Edo Ondarroako «baraitx inbitxuna» ulertezinetik «badakit egin behar dituena» esatera. Alfabetatzean mailak bereizi behar dira, eta pixkanaka deklinabide bakarra eta adizki bakarrak ere. Urratsez urrats. Eta aditzean ere forma sinpleak aukeratu behar dira, jendeak erabiltzen dituenak, eta subestandarrak sortuz euskalki bakoitzean: *galduko zuen, sartzen bada, etortzen denean, hurbilduko nintzen* bezalakoak erabili behar ditugu*, galdu duke, sar badadi, etor dadinean* edo *hurbilduko nintzatekeen* bezalakoen aurretik. Aspaldi erakutsi zuen Azkuek forma horiek ederrak izanik ere badutela eragozpen bat: hilak dira.[37]

### 8.4. Iparraldeko euskaltzainak

«Iparraldeko euskaltzainek» (ez da beste izenik ematen) sinatzen dute egun horretako azkeneko hitzaldia, «h»ren inguruko zehaztapen batzuk eginez. Hegoaldeko euskaltzainen arazoa baldin bazen non jarri letra hori, haiena zen gehiago nondik kendu. Eta proposatutako kenketan asmatu den edo ez. Ohar asko egiten dituzte grafema hori erabiltzearen inguruko arrazoiak zein diren zehaztuz, eta hitz zerrenda bat ere eskaintzen dute. Aldi berean, jakinarazten dute *h* nonahi jartzeak ez duela egiten batasuna, batzuek itxura hori hartzen badiote ere kontu honi.

### 8.5. Eztabaidak eta txostenak

Hitzaldiak entzun ondoren eztabaidak sortzen ziren. Ez daude denak bilduak, baina zati handi batzuk hitzez hitz bildu ziren, eta biziki interesgarriak dira lekuko horiek,

---

37. Hiori ez da, hala ere, guztiz egia. Azkeneko eguneko eztabaidan, Zarate hola mintzatu zen: «Ni hor nago, Bizkaian, erdi bide bat naizelako. Baina Zatarain bezala, ez naiz ezkontzen […] Nik Arantzazuko arauak onartzen ditut, orrazketa batzu egin ondoren» esan zuen (Euskaltzaindia 1978: 823).

ondoko urteetan behin eta berriz mahai gainean egongo diren arazoak pizten baitira han. Protagonista asko hamar urte lehenago Arantzazun agertutako berberak dira, nahiz ahots berriak ere entzuten diren. Eztabaidetan izen ezagun asko aurkituko ditugu: Mitxelena, Kintana, P. Uribarren, J. Intxausti, M. Olazar, J. A. Letamendia, L. Oiartzabal, Juan San Martin, Txillardegi, Agirrebaltzategi, Lizundia, J.J. Azurza, Haritxelar, Villasante Altuna, Olabeaga, Igarreta, Irigoien, Rotaetxe, Iruretagoiena, Latiegi, J. Alberdi, P. Pujana, E. Knörr, Davant (zintak transkribatu dituenak identifikatzen duen bakarra: «Zuberoako euskaltzaina») eta J. M. Irazola, hitz egindakoen hurrenkeraren arabera. Ohi den gisan, anitzetan, eztabaidek ez zuten zerikusi handiegirik izaten aldez aurretik entzundako hitzaldiarekin (salbu Zarateren hitzaldiaren ondoko eztabaidak, gaiari lotuago ageri baita), baina informazio handia ematen dute han gertatutakoaz: besteak beste, han pizten direlako geroago urteak eta urteak bizi-bizirik izan diren kontuek.

Horrela, euskara unibertsitatean sartzeak edo ez sartzeak eragiten dio hausnarketari, eta batez ere maisu-maistra unibertsitate eskoletan sartzearen beharra aipatzen da, Mitxelenak berak abiatu ondoren gaia. Eta nolako eragozpenak dauden euskaltzaleak ez direnen aldetik: «euskara ingelesaren edo alemanaren pareko hartzen dute». Ez zegoen modurik euskararen presentzia segurtatzeko aukerazko gaietan edo praktikak ikastoletan egiteko: «un poco para que puedan hablar en la plaza», horrekin asko eta nahiko. Kintana euskara sartzearen alde dago eta oroitarazten du —beste garai batzuk ziren, nonbait— «polizia autonomo bat eskatzen dugunean eta hortarako izan dira manifestaldiak» alderdiak eta prentsa ere horren alde daudela. Euskararen inguruko titulazioek ere ematen dute buruhausterik, batzuen ustez ez baita batere egokia Euskaltzaindia ibiltzea holako lanak egiten: tituluak beste norbaitek eman behar ditu, irakaskuntzako erakunde ofizial batek.

Gauza jakina da gure herrian hitzek aspaldi galdu zutela jatorrizko esanahia. Bada, gutxienez Bergaratik bai, esango nuke. Eztabaidan parte hartzen ari zen M. Olazarrek esan zuen Euskaltzaindiak bakarrik ematea tituluak, ofizialtasuna Euskaltzaindiak bakarrik ematea, hori *fatxismoa* zela. Gero, pixkanaka, hitz horren esanahia hedatuz joan zen eztabaidak aurrera egin ahala, pittinka-pittinka gero eta toki gehiago janez, San Martinek «ez dut fatxista naizen ala ez agertu beharrik» esan bazuen ere. Azurtzarentzat beste zerbait zen faxismoa; Zaratek euskara batuaren aldekoen artean ikusten zituen faxistak batzuetan, eta kontrakoen artean bestetzuetan: «Faszismoa sartu da konturatu gabe zenbaiten buru eta burubideetan: *Bizkaiera eskoitiar burgesek bakarrik egiten dute; Hemen batua besterik ez dugu onartzen; Guk ez dugu andereño batuzalerik onartzen, hatxezalerik ere ez; Espainolisten asmakizun bat da batua, euskara hondatzeko.* Bakoitzak bere euskara sartu nahi du leku guztietan derrigorrean eta arrapaladan, beste jokabiderik onartu gabe, inor ez ezer errespetatu gabe, faszisten gisa, euskara batu hau edo hori edo euskalkiak balira bezala euskararen etsai. Euskararen etsairik handiena erdara dela konturatu gabe»

(Euskaltzaindia 1978: 562). Txillardegik, azkenoz, «badirudi hemen oso modan jarri dela *fatxista* hitza erabiltzea» azpimarratzen du. Zergatik esaten du hori? Ba, baitirudi, gure artean, Euskaltzaindiaren kontra egiten duena liberala dela eta, aldiz, gu garela faxistak. Eta ez, ez da hala: «Esan behar da, hemen, fatxismoaren biktimarik ezagunena Lauaxeta izan zela. Bigarren biktima ezaguna, Eustakio Mendizabal. Hirugarrena, Mitxelena, eta ni neu eta beste asko ere, fatxismoaren biktimak izan garenok urte askotan, leporaino gaudela horrelako hitzak entzunez». 19.a zen eztabaidan hitza hartzen.

Egun horretan bertan, irailaren 6an, beste hainbeste txosten aurkeztu ziren, batzuk oso zehatzak, eta oso egokiak eztabaidan zegoen batasunaren inguruko puntu txiki baina funtsezko batzuei ekiten baitzieten (*h* letraren inguruan asko, atzizkiak, hitz elkarketa, *orthographia,* fonetika, eta abar), argia emanez. Beste batzuek ez dute horrenbeste interesik eta badirudi gehiago direla nork bere buruan zuena besteren aurrean botatzeko parada aprobetxatzeko idatziak. Zatarain (2 txosten), Eguzkitza (bi txosten), L. M. Mujika (bi txosten), Txillardegi (bi txosten), Sarasola, Irigoien eta Kintana izan ziren txostengileak. Ondoko eztabaidak ere aski interesgarriak dira, eta nahiko teknikoak anitzetan, eta han hasten da baten bat (Azurtza) gero urteetan iraun duen leloa hedatzen: «Euskaltzaindiak hau erabaki eta gero iritziz aldatzen du» (Villasantek gezurtatzen dio). Ez zen egia, noski, baina ikusten da argudiobideak ahal den tokitik hartu behar zituztela. Eztabaidetan ere, *h*-aren kontua izan zen borrokagaia. Jende berria ere ageri da mokokan, aipatu izenez gain: Haritxelar, Rotaetxe, Iruretagoiena,[38] Oñatibia, Altuna, Oregi, Mikel Atxaga eta Uribeetxebarria.[39]

### 8.6. Altuna eta Irigoien

Irailaren 7an Altuna eta Irigoien[40] mintzatu ziren, erakusleen inguruan (*hauk/hauek; hontan/honetan*), eta deklinabideko zenbait punturi buruz. Esan daiteke han proposatutakoa

38. *H*-ak bertsolarientzat kalte handia zekarrela zioen. Ez dakit, egia esan, baina beharbada orduko bertsolariek idatzi egiten zuten kantatu beharrean.

39. Txostenak eta eztabaidak bildu ondoren liburua editatu zuenak meritu handia du, bere eskuko oharrak eta guzti eraman baititu orri editatuetara, txosten baten transkripzioa erdizka uzten duelarik: «Orijinal hontan nola ez duan jarraitzen, guk ezin dugu asmatu» (Euskatzaindia 1978: 673), idazten du aski kontent.

40. Ez naiz ongi oroitzen, baina nik uste Alfonso Irigoien hiru urtez izan nuela Deustuko Unibertsitatean euskal filologiako irakasle. Asko zekien, gauzak nahas-mahas aurkezten bazituen ere. Modu batera eta bestera, kontu berekin zebilen beti burrunban, eta Bergaran esan behar zuena, edo esateko zuena, errepikatzen zigun behin eta berriz eskoletan: *haur ola zirola.* Gogorki kezkatua zegoen urte hartan ez baitzuen irakaslerik aurkitzen euskal filologiako

dela gero bidea egin duena batasunean. Rotaetxek bi txosten labur aurkeztu zituen, eta Mitxelenak beste bat, hitzaldi nagusiez gain. Egun horretako eztabaidak ahulagoak dira, badirudi jendea agortu samar gelditu zela lehenbiziko egunean.

Ez da batzarraren inguruko materiala hor bukatzen, zeren batzarra zela eta, Euskaltzaindiak bazituen zenbait eskaera idatziz hartuak. Ez dakit astirik izan zen haiek irakurtzeko. Sinadurarik gabeko «Araba, Bizkaia eta Gipuzkoa'ko euskarazaleak Euskaltzaindiari» izeneko idazki batean salatzen dute Arantzazutik geroztik Hegoaldean bi sail sortu direla: batzuek *h* letra erabiltzen dute, eta *ll* eta *ñ* baztertu dituzte, eta beste sailekoek juxtu-juxtu alderantziz. Euskaltzaindia azkenekoen alde agertu da. Aldi berean, Iparraldekoek ez diote inolako kasurik egiten Arantzazun onartutakoari. Gipuzkera osatua bultzatu beharko litzateke.

Bide beretik doaz aurreko uztailaren 22an Euskaltzaindiari helarazi zioten gutuntxo bateko lau sinatzaileak: Olazar, Latiegi. Ayerbe eta Arrinda, denak «Kardaberaz» izeneko elkartearen izenean. Atzera egin dezagun eta itzul gaitezen Azkuek erakutsi bidera.

Urrestarazuk erdarek euskaran duten eragina salatzen du, «laterak» bere garaian egin zuena orain espainolak eta frantsesak egiten dute, antza denez. Euskal hiztegiak behar ditugu. Ez du erakusten aparteko kezkarik biltzarreko gaiarekin, hau da, euskararen batasunarekin.

Irigaraik eta Loidik kezka erakusten dute nola ari den euskara tokia irabazten hirietan, baina herrietan galtzen. Eta alfabetatzearen beharra aldarrikatzen dute, lehenik herriko mintzoa irakatsi eta handik batura pasatzeko.

X. Gereñok zer dagoen ongi galdetzen du: *ondo/ongi, daukat/dut, ikutu/ukitu,* eta abar, «euskara batu standard bat» berehala behar dugula gaineratuz.

Zatarainek bi idazki aurkezten ditu. Segur aski ere, txosten gisa aurkeztu zituen, baina denbora gabe gelditu zelako edo, liburuaren amaieran argitaratzen dira.

Irigoien, Txillardegi, M. Azkarate, Zubizarreta, J. M. Larrazabal, A. Legarreta, P. Uribarren, J. L. Goikoetxea eta A. Ozamiz «oinarrizko euskararen premia» ikusten dute, metodoetan eta irakasleek erabiltzeko: «Arazo hau zientifikoki aztertu behar dela garbi ikusten dugu» (Euskaltzaindia 1978: 817).

Egun horretan ere izan zen eztabaida. Denborarekin sailburu izango zen Mari Karmen Garmendiak bere harridura erakutsi zuen («Izugarri arriturik nago»[41]), irakaskuntzaren

eskoletan aritzeko. Laugarren ikasturtea abian jarri behar, eta irakaslerik ez. Niri proposatu zidan, beste titulazio bat banuenez gero, eskolak ematea. Zirku bateko jauzia zirudien horrek: ikasletik irakasle izatera pasatzea uda ondoan. Banuen uste gauza horiek zailagoak ziren. Orduan hartu nuen erabakia Ameriketara joateko hizkuntzalaritza ikasketak egitera.

41. Liburuaren editoreak *h* gabe transkribatu du hemen *arriturik* hitza, nahiz ondoko lerroan *harrituta* jarri duen.

inguruko arazoak entzuten zituelarik, ez baitzuen argi ikusten aurrean eztabaidan zituen haiek bazuten inolako esperientziarik eskoletan: «Ikastoletako errealitateaz zer harreman duzue?». Mikel Atxagak batasunaren beharra aldarrikatzen du, eta Eufronio Agirrek ere gauza bera dio. Uribeetxebarriak tituluen kontua ekartzen du berriz ere mahaira, eta Karmele Rotaetxek «bibrante arazorik» ez dagoela dio.

Garbi ikusten da, halaber, Latiegik disimulurik gabe aipatzen duela, Euskaltzaindiak hartu duen bidea ikusirik, ez ote den egokia beste Akademia bat sortzea, herrikoa, Euskaltzaindia «Erregearen Akademia» delako. Baina, itxura guztien arabera, jendea nekatua zegoen, edo arazoa gainditua ikusten zuen, eta ez zen gai horretan tematu.[42]

Eztabaida akademikoei dagokienez, Kintanarenak izan ziren azken hitzak: «Agian uste dut buztana eta adarrak etxean utziak ditudala» (Euskaltzaindia 1978: 825).

### 8.7. Etxezarreta

Pentsatzen dut azken hitz horiek ez dutela zerikusirik ondoko egunean, irailaren 8an, Eustasio Etxezarretak egin zuen hitzaldi nagusiarekin, non aztertu baitzuen elizaren jokabidea euskarari buruz, hainbeste eta hainbeste adibide jarriz. Dena konfesatu zuen. Ondoko elkarrizketan Olazarren kezka nagusia geratu zen mahai gainean baratua: «Eta euskara batu honekin ados ez daudenak beren liburuak gipuzkera osoti edo euskalkietan argitaratzen baldin badituzte, elizak exkomunikatu egingo ditu?» (857. or.). Puntu horretan Davan senar-emazteak ere mintzo dira: Axular, Leizarraga, Tartas… horiek ere «beren gisako euskara batua erabiltzen zutela». I. Baztarrika, E. Agirre, E. Etxezarreta, J. Intxausti, Xarriton, Lizundia, E. Knörr, Zarate, Altuna, Iruretagoiena, L. M. Mujika («Elizak izugarrizko eraginpena du»), J. M. Aranalde, Oñatibia eta Maite Mendiburu ere ageri dira eztabaidetan. Amaiera Lizasorena da, eta unibertsitatea aipatzen du: «Ba zen garai batetan Oñatin, baina jarrai aurrera eta gora bihotzak, Aberriak hau eskatzen baitu».

Hori guztia gertatu zen herrian erromeria hasi aurretik. Tartean, Haritxelarren hitzak, Villasantaren agurra eskerrak emanez, eta hemen segidan alderatzen dugun adierazpen ofiziala. Hogeita sei zilarrezko domina ere banatu ziren hizlari eta antolatzaileen artean. Hamabi brontzezko domina bakarrik bigarren mailako antolatzaileen artean. Txostenak aurkeztu zituzten asko, eta eztabaidetan behin eta berriz ageri diren izen ospetsuak domina gabe gelditu ziren.

---

42. Gero, hala ere, Euskarazaintza sortuko zen, zinezko «erri akademia» (aski da argazkiak ikustea herritarra dela ohartzeko).

### 8.8. Adierazpen ofiziala

Euskaltzaindiak bere VIII. Biltzarraren ondoan adierazpen hau agertzen du:

1. Biltzarrerako egin diren azterketei esker, garbi ikusi du, duela hamar urte, Arantzazun eskainitako batasun asmoa eta arauek izan duten baietza eta eragina.
2. Hori horrela delarik, orduan hartu zen bidetik, euskararen batasun lanak aztertzea, sakontzea eta aintzinatzea nahi du.
3. H letrari buruz iparraldeko zazpi euskaltzainen lana baliozko iritzirik oinarritzat hartzen du. Horretarako hainbat lasterren argitasun zehatzagoak emango ditu.
4. Bustiduren grafia alde batetik, deklinabidea eta erakusleen formak, bestetik, aski ikertuak daudelakotz, erabakiak hartzeko premia ikusten du.
5. Euskalkiak eta tokian tokiko hizkerak aztertu eta landu behar direla uste du, ortografia eta hizkuntzaren azpiegitura zainduz.

   Gure irakaskuntzaren behar gorriaz jabeturik, «Ministerio de Educación y Ciencia» eta «Ministére de l'Education» direlakoei eskaria zuzenduko die: Irakasle prestakuntza-eskoletan biderik zabalenak eman ditzaten, beharrezko baita:

   a) Edozein sailetan, eta maila guztietan ikasten ari dena euskaraz irakasteko gai bihur dadin eta,
   b) Euskal Herriko eskola horietan guztietan sor dadin Filologia Euskal saila.
6. Batasunerako bidean ari diren Erakunde eta Elkarte guztiekin premiazko harremanak indartzeko nahia aditzera ematen du.

Bergaran, 1978eko Irailaren 8an

## 9. BERGARAKO ERABAKIEN GARAPENA 80KO HAMARKADATIK AURRERA

Batzarra amaitu ondoren Euskaltzaindiak lanean segitu zuen eta beste erabaki batzuk ere hartu zituen. Bergarako adierazpeneko erabaki horretan aipatzen diren puntuak lantzeko batzordeño batzuk izendatu zituen Akademiak irailaren 29ko bilkuran: bustidura (Irigoien, Sarasola, Lizundia); erakusleak (Altuna, Kintana, Txillardegi); deklinabidea (Garmendia, Villasante, Irigoien) eta H letra lantzekoa (Haritxelar, Mitxelena, Davant eta Lafitte). Batzorde buruak, orpoz orpo: Irigoien, Altuna, Villasante eta Haritxelar.

### 9.1. Erabaki berriak

Berehala, 1978ko urrian, hartu ziren erabakiak bustidurari buruz (Euskaltzaindia 1979: 91-92); Erakusleak 1979ko otsailaren 23an (Donostia) eta uztailaren 20an (Elizondo) egindako bileretan erabaki ziren (Euskaltzaindia 1979: 142 eta 716); deklinabidearen

formak azaroaren 30ean (Donostian, nahiz txostena aurreko hilabetean aurkeztua izan Bilbon, (Euskaltzaindia 1979: 633-657); *h* letra dela eta, 1979ko abenduan hartu zen erabakia Donostian, eta letra hori daramaten hitzen zerrenda proposatu zen, 16 euskaltzainen (zuzeneko edo zeharkako) sinadurarekin: «Ez da samurra izan. Mataza nahasia eta luzea izan da benetan […] Denok dakigu hamar urte honetan "H" letraren inguruan kokatu direla batasunari buruzko sesioak. Gehiegikeriarik gabe esan daiteke gaur Euskal-Herria begira daukagula», zioen Villasantek (*Bergara-ko biltzar ondoko erabakiak,* Euskaltzaindia 1979: 89). Eta bi izen aipatzen zituen «aparteko modu batez lan egin baitute»: Xarriton eta Sarasola. Erabaki hauek guztiak, eta material gehiago *Euskera 1979-3, Bergara-ko biltzar ondoko erabakiak* liburuan argitaratu zituen Euskaltzaindiak. Tartean, 1979ko azaroan, euskal alfabetoa zein den erabaki zuen (Euskaltzaindia 1979).

Hamar urte horietan zehaztu zituen Euskaltzaindiak, hortaz, ortografia (*h* letraren kontua barne), aditz laguntzailearen adizkiak, erakusleak eta kasuen formak. Horrekin esan daiteke batasunaren funtsezko zutabeak jarriak zirela. Hori, esan bezala, ez zen nolanahi gertatu: historian beste hainbeste faktore, eta denak batera, elkartu zirelarik bakarrik izan zen posible. Ereduaren beharra, belaunaldi berrien gose-egarriak, gizartearen egonezina ez bakarrik hizkuntza kontuetan, euskararen sinbolismoa, eta abar. Ikaragarriko lana izan zen, eta gezurra dirudi nola izan zen posible horrenbeste aurreratzea. Horregatik kontatu nahi izan dut xehetasun pixka batekin orduan gertatutakoa. Nekez uler daiteke euskararen batasunarekin gertatutakoa hori guztia ahazten baldin badugu. Behin oinarriak jarri ondoren etxea eraiki daiteke gainean, ongi eraiki ere. Geroztik egin den etxe hori ederra da, eta gela asko ditu, batzuk beste batzuk baino argiagoak, baina oinarri horiek gabe etxeak erraz erortzeko arriskua zuen. Horregatik dugu ezinbestekoa hango hura kontatzea. Garai hartako protagonista anitz bizi baldin badira ere, nahiago izan dut dokumentuetan ikusi dudana kontatzea.

Batasuna ez da hor amaitzen, noski, eta gero ere lan handiak egin dira: hemen aipatuko ditut garrantzizkoenak, baina gainetik bakarrik. Merezimenduak inondik ere gutxietsi gabe, badut uste urte haiek izan duten eraginik nagusiena euskararen batasunaren historian.

## 9.2. Gramatika batzordearen eta hiztegigintza lanen sorrera

Etorkizunera begira beste era bateko lanak behar zituen euskarak: sintaxi kontuak aztertu; hiztegia batu, landu eta behar berriei egokitu, eta abar. Ororen gainetik, euskal filologoak prestatu eta unibertsitatean euskal ikasketak lantzen hasi. Hori etorriko zen berehala: Bergarakoa bukatu eta hurrengo urtean egin zuen Euskaltzaindiak Arrasateko biltzarra, 1979ko abenduan (Euskaltzaindia 1980). Biltzar horretako gaia sintaxia zen, baina han aurkeztu ziren lan guztiak ikerketa lanak ziren, ez batasuna bultzatzeko erabakiak.

Ikertzaile berriek aurkeztu zituzten beren lanak beteranoekin batera. Unibertsitateetatik ari ziren ateratzen euskal filologiako lehenbiziko lizentziadunak, institutuetan euskal filologiako katedrak sortu ziren, eta 1980ko apirilaren 18an izendatu zen lehenbiziko Gramatika batzordea: Lafitte (buru), Haritxelar (buruorde), Goenaga (idazkari), M. P. Lasarte (idazkari orde), «batzorde lagun, Arrasateko batzarrean txostenak egin zituztenak, eta gaur gramatika lanetan sartuak diren beste zenbait ikerleren izenak jarri» (Euskaltzaindia 1981: 178). Irailaren 19an egin bileran Altunak *non* kasuaren gaineko lan bat aurkeztu zuen batzorde horretan, eta Lafittek *a* artikuluaz beste bat. 1982ko martxoan Goenagak batzordea egiten ari zen lanen berri eman zuen, eta «Iruñeko Kongresoa gogoan dutela, badoaz urratsak ematen» esan omen zuen, agiriak dioenez (Euskaltzaindia 1982: 602). Urriko bilkuran, hala ere, kontuak nahiko motel zihoazela adierazi zien euskaltzainei. 1984an egin beharreko bilkura prestatzen ari zela batzordea, eta horren berri emango zuela hurrengo batean. 1983ko urtarrilean egin zuen hori: Iruñean egingo da batzar hori, 1984ko irailean.

1981eko abenduaren 29an hiztegigintzan ari ziren zenbait lagun hartu zituen Euskaltzaindiak: J. M. Goñi (Elhuyar), Intxausti, Kintana, L. M. Mujika eta Sarasola. Hiztegigintzarako batzorde bat sortzea ezinbestekoa ikusi zen. Hiztegi arrunta lantzea Euskaltzaindiaren zeregina zela onartu zen. Iruñean, 1982ko urtarrilaren 29ko bileran onartu zen «zenbait batzorde desagerturik Dialektologia, Gramatika eta Hiztegigintza izango zirela, besteak beste, ekintza nagusiak» (Euskaltzaindia 1982: 598). Martxoaren 26an hiztegigintzarako lanak banatu ziren: Mitxelenari bulego bat eman zitzaion Gasteizen, eta Sarasola hartu zuen zuzendaritzako lagun. Hiztegi hiritartua lantzeko ere batzorde ttipi bat izendatu zen: Knorr, Akesolo, P. Mujika, L. M. Mujika, M. Izeta eta Kintana. Sarasola izango zen batzuen eta besteen arteko lokarri.

Hortik aitzinat etengabeko aldaketa isil bat hasi zen gertatzen Euskaltzaindian: apaizek, eta borondate oneko euskaltzaleek, anitzetan autodidaktek, osatzen bazuten ordura arteko Euskaltzaindia, ia sortu zenetik, pixkanaka unibertsitate munduko ikertzaileak hasi ziren sartzen. Villasantek ireki zizkien lehenik ateak beldurrik gabe, eta oro bat geroago hainbeste urtez euskaltzainburu izango zen Jean Haritxelarrek egin zuen horren aldeko apustu garbia. 1980ko uztailean aukeratu zuten Altuna euskaltzain.

## 10. FUNTSEZKO LANAK

Urte horiek eman zioten hasiera, Euskaltzaindiaren barnean, beste handitasun bateko lanei. Aipatu bi batzorde horiek eta Atlasak egindakoak aipatuko ditut bakarrik, xehetasunetan sartu gabe, nahiz ez diren horiek akademiaren lan bakarrak: toponomastikaren inguruan ere hainbeste lan egin ditu. Lehenbiziko biek (hiztegia,

gramatika) ikerkuntzan eta batasunean pausatzen dituzte hankak. Atlasgintzak, batez ere ikerkuntzan. Lan horiek 80ko hamarkada horren hasieran abiatu ziren. Ikusi ditugu garai bertsukoak direla gramatikaren eta hiztegiaren egitasmoak. Atlasa egitea (Euskararen Herri Hizkeren Atlasa, EHHA) 1983an onartu zen eta ondoko urtean hasi lanean. Hamarkada horretan, hortaz, eragin handiko lanak jarri zituen abian Euskaltzaindiak. Villasantek bultzatu zuen hori guztia, eta hamarkada amaieran Haritxelarrek hartu zion txanda, urte horretan hasi eta 2005eraino bera izan baita euskaltzainburua.

Atlasa, esan bezala, ez dago zuzenean batasunarekin lotua, eta hizkeren gaineko datuen bilketa sistematikoa egitea du helburu nagusi. Tamainari dagokionez, datu hauek esanguratsuak dira: 2.857 galdera, 85 gairen inguruan, eta 145 tokitan eginak. Honen xehetasunak, besteak beste, G. Aurrekoetxea eta Charles Videgainek (1993) eman dituzte. Datu guztiak prozesatu eta aztertu ondoren, zortzi liburu atera dira dagoeneko (2008-2010), beren audio sistemekin hornituak.

Hiztegigintzaren inguruan egin diren lanak erraldoiak dira, eta euskararen inguruan historia osoan egin diren aberatsenak. Mitxelena hil zenez geroztik (Errenteriako maisuak ere hamarkada horretan aukeratu baitzuen partitzea, 1987an), Ibon Sarasolak eraman ditu aurrera lan horiek guztiak, ikertzaile talde baten buru. *Orotariko Euskal Hiztegia*-ren hamasei liburukiak aipatu behar ditugu lehenik: hiztegi historikoa, 5 milioi inguruko datu base batean funtsatzen dena:[43] euskararen lehenbiziko lekukoak ditugunetik batasunaren oinarriak jartzen hasi ziren arteko testuak bildu ziren, makinatu, ortografian batu, eta azterketa egin, euskara gaztelania den hiztegi eredugarri hau egiteko. Liburukiak pixkanaka argitaratu ziren, 1987an lehenbizikoa eta 2005ean azkena. Denetara 15.000 orrialde inguru dira, eta 140.464 sarrerak (gehi 52.243 azpisarrera) osatzen dituzte liburu horiek. Lan hori funtsezkoa izan da gure tradizio idatzia ezagutu ahal izateko eta geroztik osatu diren hiztegiak egiteko. Ez du inon ere parekorik, eta kanpoan egin diren antzeko hiztegiekin ez da zorretan gelditu, kontuan hartzen badugu euskaren lekukotasunak ere apalak direla beste hizkuntza horiekin erkatuz gero.

*OEH*-k ematen duen informazioa gauza askotarako erabili du Euskaltzaindiak. Besteak beste, batasunaren inguruko zenbait erabaki hartzeko eta, batez ere, *Hiztegi Batua*

---

43. 5 M hitz asko dela ematen du. Eta garai hartako, zeuden baliabide elektronikoen ezaugarriak kontuan hartzen baditugu, datu masa handia da. Baina geroztik asko aldatu dira gauzak. EHUko Euskara Institutuak baditu zenbait datu base gaurko euskararenak, eta edozeinek kontsulta ditzake. Ereduzko Prosa Gaur izenekoak (http://www.ehu.es/euskara-orria/euskara/ereduzkoa/) *OEH* egiteko erabili zenarekin erkatzen badugu, halako bost ditu (25 M). Eta bada beste bat (ETC) 34 aldiz biderkatzen duena (205 M). Ez da gehiegi hori ere. *Science* aldizkarian argitaratutako artikulu batean (Michel *et al.* 2011) egileek 500.000 M hitzeko («500 billion words») corpus batez mintzo dira.

(Euskaltzaindia 2000),[44] lehenik, eta *Euskaltzaindiaren Hiztegia*, gero, egiteko. Hiztegi horrekin bukatzen da batasunaren inguruko beste ziklo handi bat, ez baita zalantzarik idazleek hiztegi hori hartu dutela eredu, eta ezbaian zeuden aukera asko eta asko, hiztegiari zegozkionak, edo aditz batzuen erregimenari, liburu honek zedarritu zituela. Berriz ere itzuliko gara berehala gai honetara.

Gramatika Batzordeak ere segitu du etengabe lanean urte hauetan guztietan. 1984an aurkeztu zuen denen aurrean lehenbiziko txosten luzea, izen sintagmaren gainean. Aurkezpena Iruñean egin zuen, irailean, Arturo Campion euskaltzalearen omenez egin bilkura irekian. Eta horrek eman zion hasiera *Euskal Gramatika. Lehen Urratsak* izeneko liburu sailari. Denetara zazpi liburukik (1985, 1987, 1990, 1994, 1999, 2005 eta 2011) osatzen dute bilduma. Horietan lehenbizikoa idazmakinatua argitaratu zen, behin-behinekotasunaz jabeturik, eztabaidatzeko zerbait bezala argitaratu nahi izan baitzuen batzordeak. Gero, lehenbiziko liburu horrek osagarri bat izan zuen (1987), eta berriz ere argitaratu zen handik urte batzuetara (1991) osagarria ere bilduz. Tartean (1988) lehenbiziko bi liburukien gai aurkibideak biltzen zituen liburua eman zen argitara eta perpaus bakunaren inguruko gramatika laburra ere (1993). Gramatika hau da euskarari buruz inoiz argitaratu izan den lanik zehatzena eta aberatsena. Euskararen deskripzioa egiten saiatzen da, arauemailea izan gabe, nahiz betiere eskura dituen aukeren artean argia ematen duen tradizioan eta erabileran oinarritutako argibideak ematen dituen.

Aipatu dut gorago Villasantek eta Haritxelarrek bultzatutako lan egiteko moduak eraman zuela unibertsitateko jendea Euskaltzaindira. Hori gertatu zen euskaltzain osoen artean, baina argiago ikusten da beharbada batzordeen bidez egindako lan hauetan guztietan. Ezin da ukatu Deustuko Unibertsitateak eta Euskal Herriko Unibertsitateak bultzatutako ikasketek jende askoren formazioa segurtatu zuela, eta eragin handia izan zuela euskararen inguruan kalitate handiagoko lanak eta ikerketak egiteko orduan. Horretaz ongi baliatu zen Euskaltzaindia. Inoiz ez bezalako indarra erakutsi zuen urte horietan euskal akademiak, baina, arrazoi beragatik, unibertsitateek beren autonomia garatu ahala, Euskaltzaindiak erakutsitako indar hori ahulduz joan da: gaur egun euskararen inguruko tesiak unibertsitatean egiten dira. Bestetik, gizarteak ere ez du batasunaren halako beharrik, egina baita, eta euskararen presentzia idatzia guztiz normaldua baita, dela liburuetan, dela hezkuntzan, dela hedabideetan. Faktore horiek, gehi hemen aipatzerik merezi ez duen beste gertaera batzuen eraginaz, esan daiteke Euskaltzaindia indargabetuago ageri dela egun, orain dela hogeita bost urte baino.

44. Zuzenean kontsulta egiteko: http://www.euskaltzaindia.net/index.php?option=com_ hiztegian bilatu&Itemid=189&lang=es&view=frontpage

Atlasa, hiztegia eta gramatika izan dira, hortaz, hiru lan nagusi, eta batez ere azkeneko biek eragin handia izan dute batasunean. Baina badira aipatu beharreko beste kontu batzuk ere.

Historia ez da gelditzen, eta Euskaltzaindiak erabaki zuen Arantzazuko biltzarra gertatu zenetik 25. urtemuga behar den bezala ospatu behar zuela. 1993an hasiko ziren ospakizunak eta 1994an amaitu, batzar ireki batekin. Batzar hori urrian egin zen, EHUko Leioako campusean, hori ere aldaketen seinale: elizatik unibertsitatera. 1990eko azaroaren 30ean egin bileran erabaki zuen Euskaltzaindiak komeniko litzatekeela airean zeuden batasunaren gaineko zenbait erabaki gehiago hartzea. Erabaki horiek arlo askotarikoak (Salaburu 1995) ziren (gramatika, hiztegia, toponomastika, eta abar), eta horregatik pentsatu zuen komeniko litzatekeela batzordeño bat izendatzea hartzeko ziren erabaki horiek denak koordinatu eta bide beretik har zitezen, kontraesanik sor ez zedin batzorde bakoitzak bere aldetik proposatzen zituen erabakien artean (Euskaltzaindia 1991: 77). Handik hilabete pare batera egin ziren akademiaren barne jardunaldiak Ziburun, eta lagun hauek izendatu ziren batzordeñoa osatzeko: Villasante, Altuna, Xarriton, Salaburu eta Sarasola (Euskaltzaindia 1991: 457). Hurrengo bileran erabaki ziren egitura eta egitekoak (Euskaltzaindia 1991: 461): «Ziburun hartutako erabakiaren garapenez goizean bildu da Euskara Batuko batzordea, eta bertan L. Villasante batzordeburu izendatua izan da, P. Salaburu idazkari, P. Altuna, P. Charritton eta I. Sarasola direlarik batzordekideak. Arantzazuko Batzarreearen 25. urtekari egin nahi diren ekintzen barruan, orain arte araututakoa berrikustea, arau berriak eman eta gaizki erabiltzen direnak azaltzea da bere helburua».

Euskara Batuko Batzordea gogor aritu zen lanean urte horietan, 1992ko otsaileko osoko bilkuran aurkeztu zuen egitekoaren programa, ordura arte hartutako erabaki batzuen berraztertzearen beharra aipatu zen, eta proposamen berriak egin zituen hurrengo hilabeteetan: apirilean («Euskaltzaindiaren bigarren agiria euskal hitzei buruz», «Letra larrien erabilera euskaraz») maiatzean («*bat* eta *batzuk*-en deklinabidea»), ekainean («Arabera/arauera», «eritzi/iritzi»), irailean («Lerroz aldatzean marratxoak nola jarri»), eta abar. Arruntean kontrako bozik gabe onartu ziren proposamen horiek. Ez eztabaida latzik gabe zenbaitetan, hala ere. Gaizki ulertze batzuk zirela eta, uztailean zehaztu zen eztabaida prozedura, kanpoko jendeari ere bidea emanez oharrak egin zitzaten. Liburuxka batzuetan argitaratzen ziren proposamenak, ez zuten erabakien mailarik, eta erabakien hartzeko behin betiko kontua Leioan egingo zen batzarra pasatu arte utzi baitzen: hola, astia ematen zitzaion jendeari eta argi ikusten zen zein zen proposamen horren onartze maila. Garai hartako agirietan ikusiko denez, eztabaida biziki gogor eta zaratatsuak zeuden batzuetan. Holako erabakiak hartzeko orduan ezinbestekoa zela euskaltzain urgazleei ere horren berri ematea, eta haien iritzia entzutea, haien eskubide osoa zela

hori. Eta hala egiten zen.[45] Batzargelara sartzen ziren gai hauek eztabaidatzen zirenean (batzuetan, zehatzago esanik, «sartzen ziren» horren ordez, singularra erabiltzen dute batzarreko agiriek, bikotetik bakarkakora pasatuz). Prozedura eztabaidez ez ezik, eztabaida akademikoez ere arduratzen ziren batzartuak eta horren berri ematen dute bilkura agiriek: «bizkaierazko eremuak izen-osagai zuzenarekin erabiltzea zilegi dela esanez (*arrautzak afaldu genituen,* adibidez» irakur daiteke 1993ko urtarrileko bilkuran (Euskaltzaindia 1994: 35), eta horren arabera zuzendu zen dokumenturen bat.[46] Proposamenak anitzetan Gramatika Batzordean edo beste batzordeetan sortuak ziren, eta batzorde akademiko horietan landuak, baina Euskara Batuko Batzordeak ordenatzen zituen, eta proposamena egiteko orduan, itxura aldetik ere batasuna ematen saiatzen zen.

1994ko azaroaren 25ean onartu ziren hitanoaren adizkiak. Leioako batzarraren ondotik areagotu zen Euskara Batuko Batzordearen lana, eta urte horietan hainbeste erabaki hartu ziren. Hiztegi batua ere sistematikoki aztertzen hasi zen Euskaltzaindia, eta bilera bakoitzean pasatzen ziren hitz zerrenda luzeak, eta 2000ko urtarrilaren 28an bukatu zen lehenbiziko itzulia, baina ondoko hilabetean ikusiko ziren laxo geratutako sarrerak. Martxoan onartu zen osorik, eta argitaratzeko erabakia hartu: hiztegia eta ordura arteko arauak liburuki batean argitaratzeko erabakia hartu zen eta horretarako batzordeñoa izendatu (Euskaltzaindia 2000a: 181). Apirileko bileran, ordea, Urrutiak bere harridura agertu zuen hartutako erabakiaz, ez baitzuen ulertzen onartutako prozedura arauen argitalpena aurrera eramateko (Euskaltzaindia 2000a: 963). Maiatzean eskatu zitzaien euskaltzainei *Hiztegi Batua* sinatzea. Berriz ere Urrutiak bere ezadostasuna agertu zuen onartutako «zenbait gauzarekin» (gehiago zehaztu gabe), eta zenbait prozedura eztabaidagarri iruditzen zitzaiola esan zuen, baina erakundeari zor dion leialtasunagatik liburua sinatuko zuela. Andres Urrutia 1997ko martxoaren 21ean izendatua zuten euskaltzain, sarrera handik hamaika hilabetera egin zuen eta 2005ean izendatu zuen erakundeak Euskaltzainburu. Arauen liburuxka ez zen egundaino argitaratu. 2001eko otsailean, Lekeition egindako barne jardunaldietan Euskara Batuko Batzordearen lana arintzea erabaki zen. Eta gero Euskaltzaindiak batzordea suntsitzea erabaki zuen, eta lan

45. Egia esan behar baldin bada, garai hartako hots ozen horiek itzaliz joan dira, eta, ongi ez dakigula zergatik, behin urgazle batzuk euskaltzain oso izatera pasatu zirenetik, ez da inor ere arduratzen —ez, behintzat, halako indarrarekin— urgazleen eskubideez.

46. Gauza asko dira zilegi euskaraz, eta posible, teorian. Besterik da inork erabiltzen dituen. Badira, egia da, adibide batzuk tradizioan *bildotsa afaldu dugu* esaldiaren parekoak (nahiz Arizkunen, beti, zerbait afaltzekotan *bildoskia* izango zen, ez *bildotsa*. Gaur egungo prosan, biziki bitxiak dira holakoak. Ez dira aurkitzen aski bakanka ez bada. Badira adibideak, jakina, *zer afaldu duzue?, zerbait afalduko dugu* bezalakoak, horiek ere aski bakanak. Noski *Adela afaltzera gelditu zen gau hartan* bezalako esaldiak ez dira anbiguoak euskaldun gehienentzat.

egiteko beste sistema bat bultzatu: lana, batez ere batzorde ahaldunduetan egiten da, edo egitasmoen bidez. Erabaki gehiago hartzen da, eta arinago: hiztegiaren inguruan eta toponimian, batez ere, hartzen dira erabaki horiek, beste mota bateko arauak ez baitira aspalditik eztabaidatu. Euskaltzain osoek bedeinkazioa ematen diote bestek eginari.

Aldi berean, urte horietan guztietan onomastikaren inguruko erabakiak ere hartu zituen Euskaltzaindiak, burrustan, eta horren gainean arauak eman. 2011ko abenduan hartutako erabakiak, adibidez, honela dio: «Arabieraren alfabetoan idatzitako izenak euskarara aldatzeko transkripzio-sistema», eta aurreko batean zirilikoz idatzitako izenak nola jarri euskaraz ere erabaki zen. Gaiak ezin interesgarriagoak dira, ikusten denez, eta biziki eskertzen dute idazleek holako erabakiak hartzea. Batzordeak egiten duen lanari esker badakigu Euskaltzaindiak erabaki duela *Haitz* edo *Amets* direla, esaterako, izen egokiak gizonentzat, baina ez andreentzat: hauenak *Haitza* eta *Ametsa* dira.[47] Baina ez dakigu *elizondar* edo *elizondotar* esan behar den, *arangoitiar* edo *arangoititar*; esan behar den *igeldotar* edo egokiago den *igeldoar*; eta, gure ezjakinean, ez dakigu Bozaten bizi direnak *bozatarrak* edo *bozatetarrak* diren (badakigu, hobeki esan, baina ez Akademiak argitu digulako). Eskerrak erabakia dela Djibutin bizi direnak djibutiarrak direla, eta Kamoreak izeneko tokian bizi direnak kamoretarrak direla. Batez ere, Malawikoei malawiarrak deitu behar zaiela jakiteak zama biziki arintzen du. Eta txadarrak Txaden hartu dutenei bizitokia.

Beraz, bada, behin Arantzazun oinarri sendoak jarri ondoren, esan daiteke gero arau bihurtuko ziren proposamen horiek, eta 2000. urtean argitaratutako *Hiztegi Batua*-k eman diotela azken itxura egungo eredu estandarrari (Euskaltzaindia 2000b).

Leioako batzarra aipatu dugu lehen. Leioako batzar hori EHUk campus horretan duen areto nagusian egin zen, eta aste bat osoa iraun zuen. Hainbeste jendek hartu zuen parte. Sarrera hitzaldiak Luis Villasantek («Euskara batuaren filosofiaz») eta Pello Salaburuk («Euskara batuaren egungo premiak») egin zituzten (Euskaltzaindia 1995, 643-1616). Gainerako hitzaldi eta komunikazioak sailetan banatu ziren: hiztegigintza, gramatika, lexikografia, literatura, onomastika eta ahoskera. Eta Euskaltzaindiak, hondar egunean, beti bezala, azken adierazpen bat egin zuen. Hitzaldi asko batasunarekin lotuak ziren, baina, batez ere, hitzaldi akademikoak izan ziren han aurkeztutakoak, eta batasunaren inguruko hausnarketa ederra izan zen hura. Hizlari batzuek zalantzan jarri zituzten hartutako zenbait erabaki, edo erabakiak ezartzeko mailen artean bereizi

47. Erabaki, Euskaltzaindiak ez du inoiz ere hori erabaki, baina norbaitek, bere umeari euskal izena jarri nahi diola eta, informazioa eskatzen baldin badu erakundean, hori esango diote. Batzuetan, dena den, perfekzionismo hori ez da beti betetzen: mutikoen artean ez dira *Haritza* bezalakoak ere falta. *Gozoa* neskena omen, baina ez dakit *Gozo* izeneko gizonik baden

zuten. Bestetik, batzorde akademikoetako kideek Euskaltzaindiak azken urteetan eztabaidatutako kontuak jarri zituzten denak agerian. Salaburuk batasun «formala» eta «soziologikoa» bereizi zituen hitzaldian, ez baitatoz biak bat, baina azkenean jendeak uste du soziologikoa (nagusi den hizkera, alegia) dela batasun ereduak ezinbestean eskatzen duena, eta hori ez da hola. Egia da, zernahi gisaz, idazle ezagunenak molde bat erabiltzen dutela, haiek hobekien ezagutzen dutena, eta azkenean hori ari dela pixkaka nagusitzen praktikan. Eta horrek, aldi berean, eragozten du euskalki batzuetako ñabardurak gure batasunera eramatea, pentsatuz, beharbada, gaizki pentsatuz, ez dutela estandarrean tokirik. Segur aski ere, Leioako batzarra izan da batasun kontuetan euskarak egin duen eta egingo duen azken batzar nagusia.

Hauxe, beraz, batasuna dela eta, bigarren mailako izan daitezkeen hainbeste ñabardura alde batera utzirik, Euskaltzaindiak kurritu duen bidea batasuna egin arte. Berriz ere azpimarratu behar da belaunaldi haien meritu handia, erronka hau holako modu eredugarrian gainditzeko.

## 11. BESTELAKO FAKTORE BATZUK

### 11.1. Literatura

Ez dut uste egokia den kontu hau hemen besterik gabe uztea. Inork ere ezin dio ukatu Euskaltzaindiari erakunde horrek izan duen garrantzia batasuna egin eta bulkatzeko orduan. Euskaltzaindiaren lana ezinbestekoa izan da, eta segur aski, hori da bere historian egin duen lanik garrantzizkoenetakoa, garrantzizkoena ez bada.

Baina nekez izango zukeen horrek eraginik, izan duen eragina bederen, beste faktore batzuk garai berean gertatu izan ez balira. Esan dugu lehen gazteek erakutsi zuten jarrera batasunarekin: berehala egin zuten bat. Literaturaren garapena ere aipatu behar da hemen: euskal literaturak orain arte inoiz ere izan ez duen bezalako indarra hartu du azkeneko hogeita hamar urte honetan. Espainiako Sari nazional batzuk irabazteko ere gai izan da. Irakurle asko inguratu ditu, nahiz kopurua ez den salmentek adierazi nahi duten adinakoa, batzuetan bederen: bestela, munduko irakurle hoberenak izango ginateke, diferentzia handiarekin gainera (oraingoz batzuek sinboloak erosten dituzte, liburuak erosi beharrean). Dena den, kalitate ona emateko gai izan da euskal literatura. Euskara ez da salbuespenezko hizkuntza, hizkuntza arrunta bihurtu da jende anitzentzat. Euskal idazle batzuek idatzitakoak beste hizkuntza askotara itzuli dira: Atxagaren kasua nabarmena da kontu honetan. Berarekin batera, esan daiteke Lertxundi, Saizarbitoria edo Sarrionandia bezalako idazleek nolabaiteko «euskal eredu» antzeko zerbait sortu dutela, elkarren arteko desberdintasunak baldin badira ere (Kortazar 2012). Beste

maila batean Urretabizkaia edo Irigoien bezalakoak ere aski ezagunak dira. Juan Mari Lekuonak, Gandiagak, F. Juaristik eta Letek olerki orrialde paregabeak idatzi dituzte, eta belaunaldi gazteak ere ate joka datoz: Elorriaga edo K. Uribe, esaterako. Baina badira beste asko ere: Arretxe baten eleberriak, adibidez, arras ongi saltzen dira, eta Zaldua edo Jokin Muñoz ezagunak dira, besteak beste, idazten dituzten historia laburrak direla eta. Euskal literaturak, hortaz, ezinbesteko eragina izan du batasuna garatzeko orduan, eta autoreak izan dira, buletin ofizialak baino gehiago, forma eman diotenak batasunari.

**11.2. Hezkuntza eta Unibertsitatea**

Behin eta berriz esaten ari naizen bezala, batasuna jende eta elkarte anitzen lanaren ondorioa da, eta oker geundeke hori onartuko ez bagenu. Idazleekin batera, beste maila batean, hezkuntzak ere garrantzi handia izan du. Milaka eta milaka maisu-maistra eta irakasle ari dira euskara irakasten edo euskaraz ematen beren eskolak, eta horrek halako azal lodi eta berezia uzten du hiztunen artean, gehien-gehienek batasunaren ereduaren barnean egiten baitute beren lana. Hori gertatzen da hezkuntzaren hasierako urteetatik unibertsitateraino.

Unibertsitatean sartu aurreko ikasketetan, 2016-2017 ikasturtean, baziren EAEn 384.792 ikasle: horietatik, 66.562 zeuden A ereduan; 69.636, B ereduan, eta, D ereduan, berriz, gehienak: 246.533, Eustateko[48] estatistikek erakusten duten gisan. Hogei urte lehenago, 1983-84 ikasturtean, ikasle gehiago genituen: 530.713. Eta gehienak A ereduan, gaztelaniaz: 341.868. B ereduan gutxi batzuk: 42.401. Azkenik, D ereduan, 74.342. Bilakaera gardena da: orain dela hogei bat urte, unibertsitatekoak ez ziren ikasketetan % 14k ikasten zuen euskara hutsean (D), eta orain kopuru hori % 64,06koa da. Zenbat eta gazteago izan ikasleak, tartea areagotu egiten da.

Oso adierazgarria da unibertsitatean sartzeko probak egiteko orduan ere ikasleen erdiak baino gehiagok euskaraz egitea aukeratzen duela. Unibertsitateek ekarri diote euskarari ezinbestekoa zuen beste zerbait: prestigioa, garantiekin aztertzea hizkuntza bera. Asko aldatu dira gauzak Deustuko Unibertsitateak 1970eko hamarkadan euskal ikasketak bulkatzen hasi zenetik, Gotzon Garate, Patxi Altuna eta beste batzuen eskutik. Gero, anitzez gehiago indartu dira ikasketa horiek unibertsitate publikoan, eta gaurko egunean ikasketa gehienak euskaraz edo gaztelaniaz egin daitezke, aukeran. Unibertsitateetan, eta unibertsitate ikasketen inguruan sortutako elkarteek ere (Elhuyar eta Uzei, esaterako) eragin handia izan dute. EHUko Euskara Institutua (www.ei.ehu.es) ere sistematikoki ari da euskara modernoari dagozkion material asko jartzen denen

48. www.eustat.es. Badira ikasle gutxi batzuk eredu horietatik kanpo ere, X ereduan.

eskura: corpusak, hiztegiak, Sareko Euskal Gramatika (SEG) eta abar. Euskal hedabideek ere batasunaren aldeko apustua egin zuten beren garaian: irrati gehienek, telebistak, egunkari eta aldizkariek eredu batua aukeratu dute[49] eguneroko jardunean.[50]

### 11.3. Gobernuaren eragina

Horien guztien atzetik gobernua dago, batez ere EAEko Eusko Jaurlaritza (Foru Aldundien edo udalerrien konpetentziak apalagoak dira, nahiz askotan euskara bultzatu eta indartzeko programak ere badiren). Hau azpimarratzeko kontua da, gobernuak hasiera-hasieratik egin baitzuen batasunaren aldeko apustua: nekez aurreratuko genuke batasunean hau horrela gertatu ez balitz. Gobernuari aitortu behar zaio, hortaz, duen merezimendu guztia, akademiak egin zuen lana babestu zuelako. Jakina, hemen Euskadiko Erkidegoaz ari naiz. Holako laguntzarik izan ez den tokietan, kontuak okertu dira: Nafarroan ozta-ozta dago hizkuntza, eta Iparraldean gibelka doa, hainbeste hiztun galdu dira han.

Gobernuaren eragin politikoaz jabetzeko, aski da zenbait datu konparatzea. Eusko Jaurlaritzak (2012) argitaratu dituen inkesta eta mapek erakusten duten gisan, 1991n, Euskal Herri osoan, 16 urtetik gorako biztanleak kontuan harturik, % 22,3 elebidunak ziren (ongi moldatzen ziren euskaraz eta gaztelaniaz), eta % 7,7 elebidun hartzaileak (euskara ulertzen zutenak). Hogeita bost urte geroago, gauzak aldatzen dira: % 28,4 eta % 16,4 dira, hurrenez hurren. Baina interesgarriena da adinaren kontuak ere aldaera handia erakusten duela: 1991n elebidun gehienak 65 urte baino zaharragoak ziren (% 28,5). 2016an, ordea, elebidun gehienak 16-24 urteko tartean biltzen dira (% 55,4). Desberdintasuna nabarmenagoa izango litzateke 16 urte baino gazteagoak ere kontuan hartuko bagenitu. Datu horiek, esan bezala, Euskal Herri osoari dagozkio.

Aldaketa argiak ikusten dira hor. Baina aldaketa hauek are handiagoak dira EAE bakarrik kontuan hartzen baldin bada (ez dezagun atzendu biztanle gehienak hor bizi direla), ia biztanle erdiak (16 urtetik gorakoen artean), elebidunak edo elebidun hartzaileak baitira (% 53). Eta adina kontuan hartzen badugu, 16-24ko adin tarte horretan % 71,4 elebiduna da. Zenbat eta gazteago, orduan eta euskaldunago. Ehunekoak

49. Egia da tokiko aldizkarietan askotan erabili nahi izaten dela lekuko mintzoa: horrela sortzen dira halako nahaste-borraste batzuk, ez batua ez tokiko hizkera direnak, kuriosoak eta ez hanka ez bururik dutenak: herriko bitxikeriari eta txokokeriarik handienen ondoan ikus daitezke anitzetan toki horretan inoiz ere erabili ez diren formarik deigarrienak. Ostiko bat edo beste ematen diote gramatikari. Eritasun arinaren kontua da.

50. Gauza guztiak ez dira, jakina, ilunik gabeak. Euskara bera ere aldatu da urte hauetan. Argi-ilun horietako batzuk beste liburu batean (Salaburu 2002) aztertu nituen.

txikiagoak dira Nafarroan (% 23,2 elebidun oso eta hartzaile) eta Iparraldean (% 29,8). Baina Iparraldean, beste lurraldeetan ez bezala, nahiz gazteen artean hiztun kopurua handitzxen ari den azken urteetan. 1996an 16-24 urteen arteko gazteen euskal hiztunak %11,3 egiten zuten, eta 2016an %18,9raino igo da. Beraz, joerak argiak dira: EAEn tokia egiten ari da euskara, eta tokia gazteenen artean egiten du, etorkizuna segurtatzeko ezinbestekoa den (baina ez askikoa) baldintza betez horrela; Nafarroan ere antzeko joera gertatzen ari da, baina ez du horrenbesteko indarrik erakusten inondik ere. Azkenik, Iparraldean, euskara galtzen ari da, azken urteetan gauzak zertxobait aldatzen ari baldin badira ere, gainbeherak ez baitu lehenago izan duen indarra. Hor ikusten da gobernuaren eragina: euskararen garapena serioski hartu den toki bakarra EAE da. Euskarak iraun baldin badu, besteak beste, gobernuaren eraginagatik izan da, batzuek hori bigarren mailan jartzen badute ere. Inkestek diotenez (berriz ere diot, kontu handia izan behar da datu hauekin eta betiere joera gisa ulertu behar dira) EAEn, 2016an, euskara erdara beste edo gehiago erabiltzen du % 20,5ek (1991n % 15,5 zen ehunekoa). Datuak bestelakoak dira Nafarroan (% 6 eta % 16,6, hurrenez hurren), edo Iparraldean (% 13,3 eta % 8,1, 1996 eta 2016 erkatuz). Bi toki hauetan gibelka.

### 11.4. Gobernuaren apustuaren zergatia

Gobernuak arrazoi bategatik egin zuen batasunaren aldeko apustu garbia: aldez aurretik EAJ-PNV alderdiak ere barneratua zuelako, eta onartua, zegoen iritzien sasi nahasi hartan, aukeren artean, batasunaren alde jarri behar zuela, hura zela egokiena une hartan. Horrek guztiak bazituen atzean hainbeste bultzatzaile, baina bi izen aipatzeko eta gogoan izatekoak dira, historian gauza hauek garbi uztea komenigarria izaten baita: batetik, Carlos Garaikoetxea lehendakaria, eta, bestetik, Hezkuntza sailburu zen Pedro Etxenike fisikaria, sailean inguruan zituen taldekide guztiekin. Haiekin batera, gobernu osoa. Denen lana izan zen, proiektu komun horretan gauzak argi izatea eta arraunlarien gisan denek aldi berean indarra egitea norabide bakarrean. Etxenikek publikoki behin baino gehiagotan esan duenez, batzoki guztietatik pasatu behar izan zuen, banan-banan, egin nahi zuena azalduz. Batzuk alde zituen hasieratik, beste asko kontra, horiek ere hasiera-hasieratik. Baina lan handia egin behar izan zuen jendea konbentzitzeko: pentsatu behar dugu hizkuntzaren inguruko kontu guztiek jendea sobera harrotzen zutela, eta berotasun puntua ere maila egokitik aise goitiago jartzen zutela, patxadazko eztabaidak sortzeko orduan.

Atzean, beldurra zegoen gehienetan, gaizki ulertzeak, interpretazio ez egokiak: zer da h-aren kontu hori? Euskara batua deitzen den hori benetan egia da, edo norbaitek asmatu berri duen kontua? Hori ez da erdarakadaz betea? Nor dago horren atzean,

marxistak? Eta orduan argudioak eman behar ziren adierazteko euskara ona edo txarra, egokia egitea edo ez, ez zela *h* baten gorabeheren kontua, ez marxismoak erabakitzen zuena: euskara ederra egin zitekeela, edo aski txarra, h-arekin nahiz gabe. Lan handia egin behar izan zen beldurrak uxatzeko, eta arazoa beste nonbait zegoela argi uzteko. Azkenean, beldur horiek desegin zirenean, jelkideek bere egin zuten proposamena. Etxenikek, ez da esan beharrik, hau ere aski publikoa baita, adiskidetasun handia zuen Mitxelenarekin, eta bien artean konfiantza handia zegoen. Biek egosi zuten adostasun politikoa alderdiaren barnean, azkenean jende gehienak proposamena berea egin zuen arte. Alde horretatik ere prozesu bateratzailea izan zen.

Eta aurretik? Aurretik ere bazituen horrek ondorio aipagarriak: batetik, zein aldetara egiten zen apustua, horrek gobernuaren dirua ere nora bideratuko zen markatzen zuen: zorrez betetako euskararen inguruko elkarteak dirua hartzen hasi ziren, batasuna bultzatzeko erabiliko zen dirua. Pentsatzen ahal du norbaitek zer gertatuko zen garai hartan, gobernua, egin zuena egin beharrean, bizkaieraz, gipuzkeraz edo beste mintzo batzuetan idatzitako liburuen argitalpenak bultzatzen hasi balitz?[51] Horrek sortuko zuen bideraezinezko nahaste ikaragarria? Horrela gauzatu zen azkenean, eta hau da aipatu behar den beste zerbait, Etxenikeren proposamenez Euskararen erabilera normalizatzeko oinarrizko legea, 1982an, adostasun handi batekin Eusko Legebiltzarra[52] osatzen zuten alderdien artean.

Hizkuntza gutxitu batek arrakasta izan dezan hiru gauza, gutxienez, behar dira: legearen babesa, baliabide ekonomiko eta politikoak, eta hiztunen atxikimendua. Urte haietan jarri ziren benetan abian lehenbiziko biak. Hiztunen atxikimendua, dena den, norberari dagokion kontua da, ezin baita inor ere horretara bortxatu.

### 11.5. Hizkuntza anitzeko gizartea

Ordutik, ordea, euskal gizartearen ezaugarriak ere aldatu dira. Batetik, euskaldunek izan dute inoiz ere izan ez duten hezkuntza maila: anitz jendek ikasi du unibertsitatean. Gizartea bera, «herri gizarte» izatetik «hiri gizarte» izatera pasatu da. Komunikazio sistemak zeharo aldatu dira, eta egungo gazteek ordenagailu eta telefono abilen bitartez komunikatzen dira… hurbileko nahiz aski urruneko beste gazteekin. Arrunta da atzerrira joatea. Horrek esan nahi du gazte hauen euskara etengabe jartzen dela kontrastean bestelako kultura eta hizkuntzekin. Ingelesaren beharra ezin da ukatu, mundu horretan

51. Bide batez, hori egiten da egun ketxuerarekin, eta eredu desberdinak eskaintzen dira ofizialki.
52. Hemen kontsulta daiteke: http://www.euskara.euskadi.net/r59-738/es/contenidos/informacion/argitalpenak/es_6092/adjuntos/Euskararen_Legea_itzlpen_berria.pdf

